JEANNE D'ALBRET



Gravure originale de
Thomas de Leu
(XVIe siècle)

# IESVS CHRIST GVRE IAVNAREN TESTAMENTV BERRIA.





*MATTH. XVII. 5.*

*Haur da ene Seme maitea, ceinetan neure atseguin ona hartzen baitut, huni beha çaquizquiote.*

ROCHELLAN.
Pierre Hautin, Imprimiçale.
1571.

# A TRESILLVSTRE DAME IEANNE D'ALBRET, Roine de Nauarre, Dame souueraine de Bearn, &c. son treshumble & tresobeissant seruiteur Iean de Liçarrague de Briscous desire grace & paix en Iesus Christ.

*Madame, ie seroye à bon droit blasmé de temerité, de ce que vous estant comme incogneu i'ay esté si hardi que de vous dedier ceste translation Basque du nouueau Testamẽt, si pour le moins ie n'amenoye quelque excuse de ceste mienne hardiesse. Entre les autres raisons qui m'ont induit à ce faire, cestes-cy m'ont esmeu le plus, assauoir, vostre tresrenommee humanité & pieté. Quant à l'humanité, encores que ma cõdition soit telle, qu'il sembloit qu'elle ne deust iamais paruenir iusques à moy, toutesfois i'en ay senti infinis effects, mesmement en ce qu'il a pleu à vostre Maiesté m'ordonner gages, & me faire entretenir en vostre pays de Bearn: mayãt*

*par ce moyen donné grande occasion & ouuerture pour sortir des perplexitez d'esprit ausquelles i'estoye presque du tout plongé, & de la captiuité où i'estoye detenu, la souuenance de laquelle me fait encores dresser les cheueux en la teste. Quāt à la pieté, elle a engendré vne si grande reuerēce de vous és cœurs des gens de bien, que mesme ceux qui ne vous cognoissent point de face, ne peuuent assez admirer vostre vertu, pour les louanges qu'on vous donne à bon droit d'estre tant affectionnee à restablir les ruines du temple de Dieu: lequel ayant esté presque du tout abbatu & demoli, est reedifié par vostre moyen, & reprend son ancienne beauté qu'il a euë autresfois du temps des Apostres. Pour le moins ie puis mettre en auant vostre pays de Bearn, lequel ayant esté autant farouche & rebelle à la parole de Dieu, qu'autre qu'on pourroit alleguer, neantmoins auiourd'huy, par la grace de Dieu, qui s'est serui de vostre zele, prudence & magnanimité, est si bien appriuoisé, que la parole de Dieu y est paisiblement & en grande edification preschee, & la discipline ecclesiastique deuëment exercee. Mais quoy? ce n'est pas à moy d'entrer si auāt au discours de vos louāges, de peur que la clarté d'icelles*

soit aucunement obscurcie par l'insuffisance de mon style. M'arrestant donc ici, encores m'ose-ie promettre que ce qui a esté dit me pourra defendre contre quelques vns, qui font profeßion de mesdire & blasmer mesmes les plus droites & entieres volõtez. Car y peut-il auoir petitesse de condition ou autre telle chose, qui m'ait deu empescher de dedier vne œuure si saincte à vne Roine dõt le sainct Zele & la pieté sont tant recommandez par tout le mõde? Si on replique qu'vn autre eust mieux fait cela que moy, ie pourray faire seruir à ma defense ce que dit vn iour vn nommé Pædaretus, lequel ayant failli à estre esleu au nombre des trois cẽs Magistrats de la ville de Sparte, s'en retourna tout ioyeux en sa maison, disant qu'il s'esiouïssoit de ce qu'il s'estoit trouué en la ville trois cens hõmes meilleurs que luy. Außi puis-ie bien dire, que s'il se feust trouué mille personnes qui m'eussent releué de ceste miẽne peine, qui est plus grande qu'on ne pẽseroit point de prime face, i'en eusse esté autant ioyeux, que i'ay esté marri de ce qu'autre que moy ne s'est mis en auãt pour commencer. De ceci pourront rendre tesmoignage ceux qui principalement m'ont incité à prendre ceste charge. Et afin que ie die ce

*qui en est, encores que voz grandes vertus, Madame, & principalemẽt celles desquelles i'ay parlé, & les exhortations vehementes de monsieur de Gramont (qui estoit pour lors vostre Lieutenant general) ensemble les frequentes sollicitations de messieurs de Belsunce & de Meharin, & de quelques autres mes amis, ne fussent que trop suffisantes pour m'esmouuoir: toutesfois quand ie consideroye que mesme de nostre temps tant de sçauans personnages se sont employez à la traduction du nouueau Testament tant en Latin, François qu'en autres langues fort riches & vsitees: & que depuis les mesmes traducteurs, & apres eux les autres ont trouué plusieurs choses à redire, tant au sens qu'au langage, me voyant moins que rien en comparaison d'eux, n'ayant que le seul Zele & desir de profiter: & craignãt que l'effect ne peust respondre à ma volonté, ie m'arrestoye tout court: & peu s'en fallut que ie ne desistasse entierement, voyant mon entreprise d'autant plus grande, que la langue en laquelle i'ay escrit est des plus steriles & diuerses, & du tout inusitee, pour le moins en traduction. Toutesfois m'asseurant que les Basques, entre toutes autres nations, n'estoyẽt point si barbares*

que de ne pouuoir recognoistre le Seigneur en leur langue, & voyant l'occasion qui se presentoit, esperant aussi qu'il y auroit de plus suffisans que moy qui tiendroyent la main à l'œuure (comme il s'est trouué quand par ordonnance du Synode de vostre pays de Bearn, il a esté question de reueoir & conferer la besoigne) m'appuyant apres Dieu sur vostre authorité, accompagnee d'infinies vertus, à la fin ie me resolu de faire ce qui seroit en moy, & raporter de bon cœur ce qu'il a pleu à Dieu me donner pour l'edification de son Eglise. Mais encores ce qui me donna plus grande asseurance, fut l'esperance que i'eu que par ce moyen la pure parole de Dieu auroit entree & accroissement au pays des Basques, & que pour ce faire ceci vous seruiroit cõme d'vne trompette, par laquelle Dieu vous appelle pour faire la guerre à Satan en vostre royaume de Nauarre, aussi bien que vous l'auez faite & continuez en tous les autres lieux de vostre domination. Au reste, quant à la diligence que i'ay prise, & au fruict qu'elle peut apporter, les autres en iugeront. Ie diray seulement ceci, que me souuenant tousiours de l'expres commandement de Dieu, qui est de ne rien oster ni adiouster à sa parole, ie l'ay

*fait le plus fidelement qu'il m'a esté possible. Il reste que ie supplie vostre Maiesté de prendre le tout en bonne part, regardant plustost à la grandeur & dignité de l'œuure, qu'aux imperfections & à la petitesse du Translateur. Cependant ie prie Dieu, Madame, qu'il vous maintienne longuement pour se seruir de vous à sa gloire, & au salut de vos poures suiets, vous gouuernant en toutes choses par son sainct Esprit, auec Monsieur & Madame vos heureux enfans. A la Rochelle le vingt deuxieme d'Aoust,* 1571.

*GVCIZCO ANDRE NOBLE Ioanna Albrete Naffarroaco Reguina Bearnoco Andre guehién &c, denari bere cerbitzari guciZco chipiac eta gucizco obedientac, Ioannes Leiçarraga BerafcoiZcoac, Iesus Christen gratiá eta baquea desiratZen.*

ANDREA, ceren ni çure eçagun gabea beçala naicelaric, Testamentu berriaren heuscarazco translatione hunen çure Maiestateari dedicatzera ausartu içan naicen, mereci onez arintassunez accusa ahal neinde, baldin neure ausartgoa hunez cerbait excusa bereren eman ezpaneça. Bada, niri haur eraguin draudatē anhitz berce raçoinen artean içan dirade, çure humanitate hādi gende prestu guciéz laudatua, eta Iaincoazco çure zelo handia. Çure humanitateaz den becembatean, ene manerá halaco bacen-ere, non ezpaitzuen irudiric-ere çure humanitatea seculan enegana hel ahal leitela, guciagatic-ere anhitz aldez hura valiatu içan çait, eta principalqui, çure maiestatearen placera hala içanic gage ordena lequidā, çure Bearnoco herrian entretenitu içā naicen becembatean: ecen halaz eman içan çait, ithoa be-

çala azpitic nenducaten gogo-arrãguretaric, eta orhoitzeac-ere buruco biloa latz eraciten drautã captiuitatezco ſuiectionetic ilkiteco occaſione eta moien. Eta çure zelo Iaincoazcoaz den becembatean, harc du engendratu çu baithara gende preſtuén bihotzetan halaco reuerentiabat, non are çure eçagutzea eztutenec-ere ecin aſco mirets baiteçaquete çure verthutea, çuri çucen onez emaitẽ çaizquiçun laudorioacgatic ceren hain affectionatu eracuſten çaren Iaincoaren templeco gauça gaizquituén dreçatzen, eta ceren harc, quaſi deſeguin eta arraſatu içanic, orain çure moienez reedificatzẽ delaric, recrubatu baitarama bere leheneco edertaſſun Apoſtoluén demborán ohi çuena. Hunetacotzat exemplutan frangoqui allega ahal deçaquet çure Bearnoco herria: hura behin berce erran ahal daitenic batre beçain Iaincoaren hitzaren recebitzera behatu gaitzetaco eta rebeleracutſi içanic, guciagatic-ere, Iaincoa çure zeloaz, çuhurtziaz eta gogo-handitaſſunaz cerbitzatu içanic halacara manſotu eta ematu içan da, nõ egungo egunean Bearno gucian Iaincoaren hitza paiſiblequi eta edificatione handitan predicatzen baita, baieta diſciplina eccleſiaſticoa eguiazqui eta bide beçala obſeruatzen. Baina cer? etzait niri eman çure laudorién aippatzez hain aitzina auançatzea, hetãgo claretatea neure minçatzeco inſufficientiaz ilhun ezteçadançat. Baina hunetan gueldizen naicela-ere, ſporçu dut ecen, ahal lirateqeen vorõdateric çucenenez eta ho-

benez-ere gaizqui minçatzeaz berce officioric eguiten eztuten batzuetaric, ia erran içan denac-ere defenda ahal neçaquela. Ecē ahal datequea ene cōditionezco bachotaſſunic ezpa hunelaco berce gauçaric batre, ni hain obra ſaindu baten, bere zelo eta affectione ſainduagatic mūdu gucietan hābat laudorio emaiten çayon Reguina bati dedicatzetic guibeleratzeco nuenic? Eta baldin edoceinec replicatu nahi balu eta erran, ecen eguin içā dena, nic baino hobequi berce batec eguin vkan luqueela: hunetā applica ahal deçaquet neure defenſionetan Pædaretus deitzen cen Sparta hirico batec egun batez erran vkan çuena: çacuſſanean ecē hirico hirur-ehū magiſtratuetaric bat içatera, etzela hura elegitu içan biltzarretic alegueraqui bere etcherat itzuli içan cen, cioela, ecen atſeguin handia luela ceren hirur-ehun guiçon hura baino preſtuagoric hirian eriden içan ciraden. Segur nic-ere erran ahal deçaquet ecen milla eriden içan baliradc-ere, ni arindu nēduqueitenic pena hunetaric (cein içan baita nehorc lehen vicitic eſtima ahal liçaqueen baino handiago) nic vkan nuqueela hābat atſeguin nola vkan baitut atſecabe ceren niçaz berceric hatſe baten eguitera auançatu içan ezten. Huneçaz teſtimoniage ekar ahal dieçaquedé principalqui cargu hunē hartzera incitatu vkan nautenéc. Eta dena den beçala erran deçadançat, Çure verthute handiac, Andreá, eta principalqui nic orain aippatu ditudanac, bayeta orduan çure Loctenent general-

Agramondeco Iaunaren ezhortatione handiac, eta Belçunceco eta Meharineco Iaunén eta cẽbeit berce ene adiſquiderẽ ſollicitatze arduraz-coac, ene goga eraciteco aſco eta ſobera içanagatic: hala-ere conſideratzen nuenean, nola gure demborán-ere anhitz perſonage iaquinſuric Teſtamentu berriaren trãſlationean emplegatu içan dẽ, hambat Latinez, Franceſez, nola anhitz berce lẽgoage abratſez eta praticatuz: eta guero nola Trãſlataçale beréc eta hayen ondoã bercéc anhitz gauçatan, bay ſenſuan bay lengoagean cer erran eriden vkan dutén: eta ikuſſiric eçen halacoequin comparatzera ez-deus baino ez-deuſago nincela, eta neure buruäri quaſi gogo nahiaz eta probetchu eguiteco deſiraz berceric eznacuſſolaric, eta nic hala vorondate vkanagatic, beldurrez gauçã ez ledin moldez burutan ilki: carguärẽ hartzera bathiric ecin naidiqueen, eta guti falta cedin non ezpainendin choil guibelera, nacuſſanean hambatez ene entrepreſa handiago, cembatez nic ſcribatu dudan lengoage motá baita, ſterilenetaric eta diuerſenetaric: eta oraino, trãſlationetã behinçat, vſatu gabea. Alabaina ſegur içanez ecen Heuſcaldunac berce natione gucién artean ezgarela hain baſſa, nõ gure lengoagez ecin eçagut eta lauda deçagun gure Iainco Iauna: eta ikuſſiric ecen occaſionea preſentatzẽ cela, bayeta ſperançaz ecẽ ni baino ſufficientagoric-ere içanẽ cela obrán eſcu eduquirẽ luenic (nola eridẽ-ere içan baitaBearnoco ſynodoarẽ ordenãçaz lan eguina viſitatu eta cõferitu behar içan deneã) azqueneã, Iaincoaz lã-

dán, çure anhitz verthuterequilaco authoritate hãdian ſporçu harturic, gogo eguin neçã, neure ahal guciarẽ eguitera, eta Iaincoac eman placer vkã drautan guciarẽ vorondate onez haren Eliçaren edificationetan emplegatzera. Baina are guehienic bihotz eman vkan ceraùtana cen nic nuen ſperançá, ecẽ moien hunez Iaincoarẽ hitz purac vkanẽ luela ſartze eta auãçamẽdu Heuſcal-herrian: eta hunetacotzat çu Andreá, hunez cerbitzaturen cinadela trompettabaten ançora, ceinez Iaincoac deitzẽ baitzaitu hala çure Naffarroaco reſumã-ere Satani guerla eguitera, nola eguin eta eguitẽ-ere baitraucaçu çure dominationeco berce leku gucietã. Goiticora, nic obra hunetan eçarri vkan dudan diligẽtiaz eta penaz bayeta hunetaric ethor ahal daitequeen emendioaz den becẽbatean, bercéc iugeaturen duté. Haur bay erranen dut, ecen bethi orhoitic nola Iaincoaren manu expreſſa den harẽ hitzari deus edequi eztaquiõ ez eratchequi: hala eguin ahal dudã fidelquiena eguin vkan dudala. Hunẽ gaineã çure maieſtateari ſupplicamenduz nagoca, dena onetacotz othoi recebitu nahi duçun, obraren handitaſſunera eta dignitatera behatzenago duçularic ecẽ ez Tranſlataçalearen imperfectionetara eta chipitaſſunera. Hambatequin Iaincoari othoitz eguiten draucat, Andreá, nahi çaituẽ othoi bere Spiritu ſainduaz bethi illumiatzen çaituelaric, çure dohain-onetaco haour Iaun Andrequin batean, bere gloriaren auançamendutã eta çure ſuiettẽ edificationetã luçaqui conſeruatu. Rochellan Agorrilaren 22. 1 5 7 1.

*Aduertissement à ceux qui ne sçauent point le Basque, pour le sçauoir lire.*

LEs mots Basques se prononcent auec toutes leurs lettres, à la façon Latine, comme ils s'escriuent: u voyele se prononce à pleine bouche comme si c'estoit ou.

## HEVSCALDVNEY.

HEuscarazco hitzac, nola scribatzen, hala letra guciequin Latinén ançora pronuntiatzen-ere dirade: eta u vocala, bethequi, ou baliz beçala. Berçalde Testamentu berriaren heuscarazco trãslatione hunetan hitz bakoitz batzu letra cheheagoz textu arteã eçarri içan dirade, eçagun dençat ecen hec teztuan aditzen diraden hitzac içanagatic, eztiradela ordea textu gorputz berecoac, baina declaragarri iarriac. Gaineracoaz den becembatean, batbederaç daqui heuscal herriã quasi etche batetic bercera-ere minçatzeco manerán cer differentiá eta diuersitatea den: raçoin hunegatic sensu eguiazcotic aldaratu gabe, lengoageaz den becembatean ahalic guehiena guciey adi eraciteari iarreiqui içan gaitzaitza, eta ez choil edocein leku iaquineco lenhoage bereciri: eta badaquigu ecen demborarequin anhitz hitz eta minçatzeco manera, eridenen dela obra hunetan, bercela hobequi erran çatenic: halacoetan, gauçá ceren den daquitenetaric batbedera, orhoituren da, othoi, ecen hunelaco gauçác, guciz lengoage oraino vsatu gabe batetan, ecin behingoaz halaco perfectionetan iar daitezquela, nola behar bailiçateque: guciagatic-ere minçatzeco manerán anhitz arrastatu gabe, Iaincoaren hitz purari iarreiquiteco desira dutenéc, sporçu dugu eridenen dutela (suporturequin) cerçaz contenta. Eta baldin sperança dugun beçala, oraindrano eguin den hunetán heuscaldunac goçoric edo edificationeric hartzen badu, hunetan emplegatu içan diradenéc bihotz harturen duté, oraindanic gogo-ere duté beçala, eguin denaren berriz ikusteco eta corrigitzeco: bayeta, baldin Iaunac hala placer badu, passage difficilenén declaragarri annotationén eçarteco. Iaincoac othoi, haren desohoretaco den doctrina gucia eçagut eraciric eta confunditurie, haren ohoretaco dena bethi entreteni eta auança deçala Iesus Christ bere Seme gure Iaunaren icenean. Amen.

*BATBEDERAC IAQVITE-co, eta maiz iracurtzeco duen Aduertimendua nola Jesus Christ den Iaincoaren Leguearen fina, eta gure saluatzeco moien bakoitza.*

IAinco gauça gucién Creaçale eta obrero gucizco perfectoac eta excellentac, bere goitico creaturetan miraculuzco baino miraculuzcoago eracutsi içanic, are berce gucien gaineco eta bere obra gucién monstraburu beçala, creatu vkan çué guiçona-ere, gucizco excellentia perfectionetacobat hura baithan contempla ahal ledinçat: * ecen creatu vkan çuen bere imaginara eta irudira, halaco maneraz non Iaincoaren gloriazco claretateac hura baithan claroqui arguitzen baitzuen. Eta perfectionetaco ſtatu eçarri içan cen hunetan iraun eraci ahal ceçaqueon moiena cen, bethi humilia ledin Iaincoaren maieſtate sainduaren aitzinean, hura bethi remerciamendurequin magnificatzé eta laudatzen luelaric: eta ezleçan bere burua baithan bere gloriaric batre bilhatzera presumi: baina nola gauça gucia garaitic eman içan baitzen, hala goiti bethi beha leçan, laudorio gucia appartenitzen çayon Iaincoa baithá glorifica ledinçat. Baina dohacabeac bere baithan cerbait içan nahiz, bertan has cedin eçagutze gabetzen, eta nondic ona heldu çayon ahanciten, eta ingrataſſunezco hauteneta te batez bere Creaçalearé eta gratia gucien emailearen contra entrepreni ceçan vrgulutsuturic alchatzera. Eta halacotz *trebuca cedin bere galtzapenetan, bere lehen creationeco dignitate eta excellentia gucia gal ceçan, bere gloria guciaz billuz eta gabe cedin, hura baithan eçarri içan ciraden donoetaric aldara eta erauz cedin, bere vrguluan confus içateco, eta bortchaz sendi leçan amorioz aditu nahi vká etzuena, nola bere-berez etzen

*Gen 1.1.

*Gen.1.27.

*Gen.3.6.

ez egundano-ere içan vanitate baicen, verthute gucitaco Iauna aſſiſtitu eta valiatu içan çayon becembatean baicen. Hunen gainean has cedin Iaincoa haren beguitan hartzen, eta (nola mereci-ere baitzuen) bere obratan deſaboatzen, ikuſſiric ecen haren imaginá eta irudia hura baithan ez eztatu içan cela, eta haren ontaſſunezco gratia guciac iraũgui içan ciradela. Eta nola Iaincoac guiçona eçarri eta ordenatu vkan baitzuen, aita bat bere haour gucizco maitean beçala, hura baithan delecta ledin eta atſeguin har ahal leçançat: berçaldera bere deſobedientiaren cauſaz hiragun cequion, eta abominationetan eta beguitan har ceçan, halaco maneraz non hura baithan lehen laket eta placent çayon gucia, eguin baitzequion deſplacent, eta delectatzen ohi çuenac tharrita baitzeçan: aitataſſunezco begui eme batez behatzen ohi çuena deteſtationetã harturic eta abhorrituric beguietaco-ere ſobera içan çayó. Eta labur erraitera, guiçona cena cen beçala bere appertenẽtia, dependentia, bere eguitate bere penſamendu, bere minçatze eta içate guciarequin gaizetſi vkan du Iaincoac, bere etſay eta contraſt ſpecial anço: bay erraiterano ecen * vrriqui çuela ceren guiçona eguin vkan luen. Eta confuſione hunetara iraitzi içan cen ondoã bere irudico generationean engendratzeco abõdant içã da bere haci maradicatuan, arraça viciatuan, gaichtoã, corrũpituan, ontaſſun oroz deſprobedituã, gaichtaqueriaz abratſean eta abondantean. Guciagatic-ere Iaun miſericordioſoac * (ceinec ezpaitu onheſten ſolament, baina bera baita onheriztе eta charitate) bere ontaſſun handiagatic onhetſi içateco digne etzena-ere onhetſi nahiz eztitu choil galdu ſunſitu ez abyſmatu vkan guiçonac, hayẽ iniquitateac mereci beçala: * baina emetaſſunez eta patientiaz ſuſtengatu eta ſuportatu vkan ditu, harengana conuertitzeco eta aldaratu içan ciraden obedientiara itzultzeco ſpatio eta leku emanez. Eta Iaincoac irudiric batre eguin gabe, hæy manifeſtatu nahi ezpalitzauẽ beçala, guiçonac ichilic vtziten baicituen-ere * cein bere deſirén eta guthiciazco affectionén ondoan ioaitera, deus bere hitzazco legueric ez gaztiguric ez correctioneric

* Gen.6.7.

* Eph.2.4. 1.ioan.4.16.

* Gen.6.3.

* Pſal.8.13 act.14.16.

neric ez guidamenduric batre gabe, * guciagatic-ere hec haren bide beçala * bilhatzera erideitera, eçagutzera eta ohoratzera incitatu behar ciratequeen auertiméduric asco emã vkan draue. Ecẽ leku orotã eta gauça guciétã dreçatu eta altchatu vkã ditu bere enseignác eta armoriác, bay hain gauça clarotã, nõ ecin baitzatequẽ nehor, hain frangoqui bere magnificentia eracusten çuen Iaun subirano baten bide beçala eçagutu gabeaz excusaric batre ahal luqueenic. Ecen mũduco ingurune eta corner gucietã bay ceruã bay lurreã scribatu eta engrauatu beçala vkã du bere puissançaren, ontassunaren, cuhurtziaren eta eternitateare gloriá. Eta S. Paulec * eguiazqui errã vkã du ecen Iauna, bere hitzarẽ eçagutzea igorri vkã etzeraue gendeac baithara-ere, * eztela egũdano berarçazco testimoniage gabe içan: ikussiric ecen lurraren aldebatetic berceranoco creatura guciac ahal ciratequeela Iaincoaren gloriáz testimonio eta meçu guiçon guciac baithara, haren bilha eraciteco, eta eriden ondoan, hain Iaun onaren, hain puissantaren, hain çuhurraren eta eternalaren dignitateari çayon beçala recebi eta ohora eraciteco, eta inquisitione hunen eguiteco creatura hetaric batbederac cerbizatzen çuẽ. Ecen choritchoec-ere cantatzen ceraucaten Iaincoari: abre guciac, cein bere leguean beharra çutenaren peituya eçaguturic, hãri aiuta esquez beçala çaizcan: Elementéc beldur eta obedientia eracusten ceraucaten: mendiéc bere hotsaz laudorio emaiten ceraucaten: errequéc eta ithurriéc, ceinec bere moldean beguitharte eta diligentiarequin obedientia eracusten eta rendatzen ceraucaten: belharrec eta lorec bere proprietatetan eta vssainetan auançamendu eta leyaltate elegrançarequin eracustẽ ceraucatẽ. * Eta eçagutze hunen vkaitera hain vrrun ioan gaberic-ere guiçonetaric batbederac bere baithan eridẽ ahal ceçaqueen, gu gucioc haren verthute gutan habitatzen denaz substãtiatzen eta conseruatzen garen becembatean. Eta are bere clementia eta ontassun infinitoa guiçonén artean manifesta leçançat, etzayo asco içan, erran den creaturezco manera hunetan gucien instruitzea: baina are bere voza specialquia-

*act.17.30
*act.17.27
*Rom.1.20
eph.4.18
*Act.14.17
psal.9.1
*Act.17.27

*Exo. 20. 2 deut. 7. 6 go adi eraci drauca edocein populu bereciri,*cein bere vorondate onez eta liberalitate gratiazcoz lurreco natione gucien artean elegitu eta hautatu vkan baitzuen eta hec ciraden Israeleco haourrac, hæy specialqui eta claroqui bere hitzaz manifestatu içan çaye, eta bere obra miraculuzcoez declaratu vkan draue cer çaquian
* Exod. 12. 51 eguiten :* ecen hec Egypteco regue Pharaoren suiectionean marrusceatuac sclabo ceuden lekutic idoquiric, largoan eta libertate ossoan eçarri vkã ditu :* eta lagun-
* Exod. 13. 21 du içan çaye bera-ere hayén arteã ihessi balebila beçala:* haci eta substãtiatu vkan ditu desertuan: lur pro-
* Exod. 16. 14. mettatu ceraueneco possessor eguin vkan ditu:* triũpha
* Exo. 17. 13 eta victoria escuetara eman vkan draue.* Eta berce na-
* Exo. 19. 5 tionendaço deus ezpaliz beçala Israeleco Iainco expressuqui eta bereciqui deithu nahi içan den beçala, nahi vkan du Israel-ere baré populu bereci dei ledin, baina halaco conditionerequin, non ezleçaten berce Iaunic eçagut ez berce Iaincoric recebi. Eta alliança haur iragan eta confirmatu içan da Testamentuzco instrument authenticoz eta harc berac emã vkan draué testimoniage expressez: guciacgatic-ere guiçonac, nola bere arraça maradicaturat aurditẽ baitute guciéc, eta nola bere Aita Adamẽ successor eta primu baitirade: erran diraden eta anhitz berce eguin içã çayene remõstrançaz eztute cõturic eguin: eta Iaincoac aduertiméduz emã ceraué do-
* Rom. 1. 21 ctrinari etzaizca behatu nahi içan.* Creatura gucietan Iaincoaré magnificẽtiá eta gloriá scribatua beçala testificatzen eta eracusten bacen-ere, etzaye Gentiley deus probetchatu içã halacotz Iaincoaré glorifica eraciteco.
*Rom. 2. 17 *Legueac ez Prophetéc eztute deus autoritateric vkã Iuduac baithara, hayen bide çucenera erekarteco eta guidatzeco. Guciac içã dirade itsu arguira, gor aduertimen-
*Rom. 1. 19 duetara, eta gogortuac manaméduetara.* Salbu, miraculu etsiric, eta ardura recebitzé cituztẽ vngui handiez garaithu içanic, Gentiley bortcha içã baitzaye, hambat on emaitẽ cerauen vnguiguile subiranoaré eçagutzera. Baina hec-ere bide cẽ gloriá Iainco eguiazcoari emã bideã imaginatu vkã dute Iaincobat bere placerera, eta berén fantasia erhoac bere vanitatean eta gueçurreã bu-

rutan eman cerauenaren araura. Eta ez Iaincobat ſolament, baina hayen otrecuidança eta auſartgoa erhoac imaginatu eta eguin vkan ahal duen becembat-ere bay: hambatetarano non ezpaitzen populuric ez regioneric oni irudi çayonaren araura Iainco berriric eguiten etzuenic. *Eta handic idolatria traidoreac eta maradicatuac hartu vkan du bere bogá, eta harc itzuli vkan ditu Iainco eguiazcoaganic: eta beréc placer çuten moldera eguin vkan cituztē imaginén ondoan irion içan dirade. Eta Iuduéz den becembatean, Iaunac bere cerbitzariéz igorten cerauzten aduertimenduac recebitu, acceptatu eta laudatu vkan badituztere: *bertan hautſi eta falſificatu vkan draucate fedea Iaincoari, eta aldaratu içan dirade harēganic arinzqui: eta hautſi eta menoſpreciatu vkan dute haren Leguea, eta hura hiragunduric gogongaraitic hari iarreiqui irudi eguin vkā dute: eſtrangertu eta vrrundu içan dirade Iaincoarē etchetic: eta harē vorondatearen cōtra Gentilén manera berean idolatratuz hec-ere Iainco arrotzē ondoā diſſolutoqui laſter eguin vkan dutē. Cauſa hunegatic guiçonéc, hābat Iuduéc nola Gētiléc Iaincoagana hurbiltzeco moienic vkaitecotz behar eta neceſſario içan da Alliāça berribat, ſeguric eta hauts ecin leitenic eguin ledin: eta haren fundatzeco eta cōfirmatzeco, bi partidē, Iaincoarē eta guiçonē arteā accordu eçartera iar leitē ararteco eta moienaçale batē beharra içā da: bercela, guiçona bethi Iaincoarē hirā eta indignationeā gueldituzē cen: eta etzuē trebucatu eta erori içā cen malediĉtione, miſeria eta cōfuſione hāditic hura releua ez idoqui ahal leçaqueen moienic batre. Behar hādi eta ondicozco hunē remediagarri Ararteco iarri behar içā dena da, *Ieſus Chriſt gure Iaun eta Saluadore Iaincoarē Seme bakoitz eguiazcoa eta eternala: *hura bere Aitarē partez guiçoney behar içā çaye igorri eta emā, bercela galdua eta deſolatua guelditzen cen mūdua redemi leçançat: eta mūduarē hatſeandanic bethiere hura baithā içā da Adam lehē guiçoneā eguin içā cē perditionearē reparatzeco ſperança gucia eta bakoitza: *Adami berari-ere, erori içā cē ſarrienaz, cōſola eta cōfortagarri hala promettatu içā çayō, declaratu içā cayoneā, nola emaztearē ſabeletico haciac ſuguearē bu-

* Eſa. 1. 4 eta 5. 24

* Hiere. 44. 10. 17. 18

* 1. Tim 2. 5

* Mat. 3. 17 eph. 1. 10

* Gen. 3. 15

rua porroſcaturẽ eta çathituren çuẽ:eta hura errã nahi cen nola virgina batẽ ſabeletic ſorthuric Ieſus Chriſtec Satanen puiſſança gucia abaturẽ eta deſeguinẽ çuen. Guero promes hura berá largoquiago arrãberritu içan çayon * Abrahami, Iaincoac erran vkan cerauçanean, ecen lurreco natione guciac haren hacian benedicatuac içanen liradela: eta hunez erran nahi çuen, ecen Ieſus Chriſt haraguiaren araura Abrahamen hacitic ethorrico cela: eta haren benedictioneaz eta reparuaz ſanctificatuac içanen liradela hura recebituren luten guciác. * Manera bereã eta hitz beretã Abrahamẽ ſeme Iſaac-iere continuatu içan çayón. * Guero anhitz Propheta-ren teſtimoniagez eta anhitz aldiz denunciatu, arramberritu eta cõfirmatu içan da promes hura bera: bay hãbatetarano, nõ confidãça eta ſegurança handiagogarri, claroqui aitzinetic declaratu içan baitzẽ, norẽganic, cer démboratan eta cer lekutã Ieſus Chriſt ſortzeco cen, cer affictione eta cer herio mota ſuffritu behar çuen, cer gloriatan reſuſcitaturẽ cen, haren reſumá ceric içanen cen: eta bereac cer ſaluamendutara guidaturen cituen.

*Gen 22. 18.*

** Gen. 26. 3*

** Eſa. 7. 14 gen. 49. 10 mich. 5. 2*

Lehenic Eſaias Propheta baithan, nola Ieſus Chriſt Iauna virgina bataganic ſorthurẽ cen aitzinetic erran içan cen, lioela, * Huna virginá içorraturen da eta erdiren ſeme batez, eta hari eritziren çayo Emmanuel. Moyſes baithan errana cegoén cer déboraz, * Iacob onac cioeneã, Iudaren leinutic ezta ſceptroa edequiren, ez haren exercitoaren guidaria, non igorteco dena igor eztadin: eta hura date gendén vſtecaria eta ſporçua. Eta haur hala verificatu eta eriden içan da Ieſus Chriſt ethorri içan den demborán. Ecen Romanoéc gobernamẽdu oroz Iuduac billuciric hoguey eta hamaçazpi vrtheren ingurunea aitzinetic, ordenatu vkan çuten * Herodes bayẽ gaiñeco regue, eſtranger celaric, Antipater Idumeacoaren ſeme, eta haren ama cen Arabiaco. Cembeit orduz lehen-ere guerthatu içan cen Iuduac regue gabetu içan baitziraden, baina egundano etziraden Conſeiller, Gobernadore ez Legue eçarleric gabe ikuſſi içan orduan beçala. * Berce deſcriptionebat-ere eguitẽ da Daniel baithan hiruroguey eta hamar aſtezco

** Eſa. 7. 14 mat. 1. 23*

** Gẽ. 49. 10*

** Mat. 2. 1*

** Dan. 9. 24*

contuaren gainean. Micheasec haren sortzeco lekua claroqui eracusten draucu, dioenean,* Eta hi Bethlehem Ephrata, ezaiz chipiena milla Iudacoen artean, hireganic ilkiren ciaitadac Israelen dominaçale içanen dena: eta haren ilkitea duc eternitateco egunén hatseandanic. Eta gure deliurançatan suffritu behar cituen afflictionez, eta gure redemptionetan iragã behar çuen herioaz den becembateã,*Esaias eta Zacharias seignalatuqui eta largoqui minçatu içan dirade. Haren resurrectioneco gloriaz eta haren resumaren qualitateaz, eta harc bere populuari ekarri behar ceraucan saluamendu gratiazcoaz * Esaiasec,* Hieremiasec, bay eta Zachariasec bethequi eta claroqui tractatu vkan dute. Eta * Iaincoaren Spirituaz complitu içanic persona saindu hauëc testificatu eta declaratu vkan dituzten promes hautan, Iaincoaren haourrac eta elegituac repausatu eta consolatu içan dirade: eta halaz haci, sustengatu eta entretenitu vkan dute bere sperançá, Iaunac promettatzen cerauenaren complimenduaren beha çaudelaric * eta complimendu hunen ikusteco desira vkan dute anhitz reguec eta prophetac: baina desir çutena beguiz ecin ikussiagatic fedez eta spirituz comprehenditzen eta ardiesten çutelaric. Eta are Messias handi hunen ethortea desir handirequin berant esten çutenac, Iaincoac manera oroz confirmago litzançat eman vkan draue bere Leguea * scribuz, * anhitz ceremonia eta anhitz purificatione eta sacrificio hartan comprehenditzen celaric: * eta hec guciac etziraden Christen moienez ethorteco ciraden on handien figura eta seignale baicen: * ecen figura hayen gorputza, eguia eta complimendu gucia Christ bera cen. * Ecen * Legueac ecin nehor perfectionetara hel ahal ceçaqueen: baina solament Christ eracusten çuelaric harengana nehor dreçatzen eta guidatzen çuen: ecen S. Paulec dioen beçala, * Christ cen chedea, fina eta complimendu gucia. * Halaber anhitz aldiz eta anhitz sasoinez igorri vkan draue edocein Regue, Prince eta Capitain hec etsayen menetic deliuraturic, baque onetan goberna litzatençat, eta edequi içan çaizten gauçac recru-

* Mich.5.2 mat.2.6
* Esa.53.4 Zac 12.10
* Esa. 53.8
* Hie.23.5
* Zach.9.9
* 2Pie.1.21
* Mat.13.17 luc.10.24
* Exo.20.2
* Leuit.1.2
* Heb.10.1
* Col.2.17
* Heb.7.19
* Gal.3.24
* Rom.10.4
* Iug 2.16

baturic,hayen resumaren triumpha eraciteco berce populu gucien artean hayen valentiaz aippa eta lauda eraciteco : Messias handi hunetaric recebitzeco cituzten gratia miraculuzcoetaric cerbeit goço moien harçaz sendi eraci liecéçat, nola hura baithã desplegatu behar baitzen Iaincoaré resumaré verthute eta puissança gucia * Baina déboraren cóplimendua,eta aitzinetic Iaincoac ordenatuvkan çuen terminoa ethorri içan denean, *Messias hãdi hãbat promettatu eta hãbat desiratu haur ethorri içã da:eta * acabatu eta cóplitu vkã du gure redéptionetan eta saluamédutan behar içã dé gucia. * Eta hura emã içã çaye ez Israelecoey solamét,baina natione eta regione orotaco géde mota guciey,* haré moienez natura humanoa Iaincoarequin recócilia eta baque leginçat.* Eta gauça hauẽ declaraçale Iesus Iaunac,nola bera baitzen fundamét bakoitza ordenatu vkã ditu bere Apostoluac,eta mũdu vniuersoan bere gratiaren publicatzeco cargu eta manamédu emã vkã draue. Guero Apostoluéc bere carguaz bidezqui eta complituqui acquitta eta descarga litecéçat,eztute bere embachadoregoaren ahozco predicationez executatzé pena eta diligétia eçarri vkã solament : baina are Moysesen eta Prophetén exéplura predicatzé çuté doctrinaré memorioa bethiereco vtzi leçatençat, scribuz-ere hura eçarri eta vtzi vkã duté:eta bere scribuetan declaratu vkã duté lehenic Iesus Christ gure Iaunac gure saluamẽducotzat eguin eta suffritu vkan duena : guero eracutsi vkan duté harc cer mótatzen duẽ,eta hartaric cer probetchu recebitzé dugũ,bay eta cer moldez hartzeco eta applicatzeco dugũ.Eta sommario haur gucia deitzẽ da Testamẽtu berria:eta berri deitzé da * Testamẽtu çaharraré respectuz:eta çaharra,berrira raportatu eta itzuli behar cen becẽbatean,bere baithã infirmo eta imperfect cé: harré iragan eta abolitu içã da figura baicé etzen becẽbatean. Baina haur da berria eta eternala, eta hunetaco Arartecoa Iesus Christ denaz gueroz, iagoitic çaharturen ez faltaturen eztena,ecé harc ratificatu eta cófirmatu vkã du bere herioaz,eta herio harçaz beraz leheneco Testamentuaren azpian restança gueldítzen ciradẽ trãsgres-

* Gal. 4.4
*Ioan.1.41
*Rom.15.8
*Luc.2.31
* 2. Cor.5. 19
* Mat.28. 19 marc.16.15 ioã. 20. 30
* Heb.8.8. 13: eta.13. 20

ſione gucién barkamendua bethequi complitu vkan du. Scripturác Teſtamentu berri haur Euangelio-ere deitzen du, cein erran nahi baita hambat nola berri ona eta aleguera : ceren hunetan eracuſten eta declaratzen baita,* nola Ieſus Chriſt Iainco viciaré Seme bakoitza naturala eta eternala, * Iainco bere Aitaren adoptionezco haour gu eguin guençançat, * guiçon eguin içan den. Hura da bada gure Saluadore bakoitza, * eta hura baithan dugu oſſoqui eta complituqui gure redéptione, baque, iuſtitia, ſanctificatione, ſaluamendu, vicitze eta içate gucia: * hura hil içan da gure bekatuacgatic, reſuſcitatu gure iuſtificationeagatic, *igã içã da ceruëtara guri hã ſartzeço * entrada eguitera, guretaco eta gure iceneã poſſeſſione hartzera, * bethi bere Aitaren aitzineã gure * Aduocat eta Sacrificadore anço aſſiſtitzera:* haré eſcuineã da iarria Regue anço, gauça gucié gaineco Iaun eta Iabe eçarri içanic, * bay ceruã bay lurreã gauça guciac repara litzançat. Eta ez Ainguerú ez Patriarcha ez Propheta, ez Apoſtolu guciéc gauça hautaric batre ecin eguin ahal çuqueité: eztirade hartacotzat Iaincoaz ordenatu içã. * Eta nola Teſtamétu çaharreã anhitz Prophetaré teſtimoniagez, anhitz aldiz Meſſiaſa promettatu içã baitzé : halaber teſtimoniage ſegurez eta guerthuz declaratu içã da Ieſus Chriſt cela Meſſias hura, eta ez berceric: eta hura cela ethorri behar cen hãbat deſiratua.* Ecen Iainco Iaunac bere vozaz eta Spirituaz, bere * Ainguerüez, Prophetéz eta * Apoſtoluéz bay eta bere creatura guciéz hãbat cóplituqui certificatu eta ſeguratu vkã gaitu, non nehorere Iaincoaré puiſſança claroqui manifeſtatuaren eta declaratuaren contra iaquiara alchatzen licela eta hari reſiſtitzen leraucala. baicen ecin contraſta bailaite . Lehenic Iainco eternalac bere voz propiaz ( baita dudaric batre gabe eguia reuoca ecin daitena ) teſtificatu vkan draucu, cioela, * Huna ene Seme maitea ceinetan hartzen baitut neure atſeguin ona huni beha çaquizquiote .* Spiritu ſainduac-ere teſtificatzé draucu guri cein gure bihotzetã S. Ioãnec dioé beçala. Halaber Ainguerú Gabrielec, Maria virginari harengana igorri içanic, errã ceraucan,

* Mat. 16. 16
* Gal. 4. 4, 5
* Mat. 1. 21
* 1. Cor. 1. 30
* Rom. 4. 25
* Marc. 16. 19
* Ioan. 14. 2
* Heb. 9. 24
* 1. ioã. 2. 1
* Eph. 1. 20. 21
* Col. 1. 20
* Gen. 3. 15
Eſa. 9. 6
* Mat. 3. 17
* Luc. 2. 9
* 1. Tier. 1. 10
* Mat. 17. 5
* 1. Ioã. 5. 8

*Luc.1.31 *Horrá conceb ituren dun eure ſabelean, eta erdiré aiz ſeme batez, eta deithuren dun haren icena Ieſus: ecen hura içanen dun handi,eta eritziten ciayon ſubiranoaren Seme:eta emanen diraucã Iainco Iaunac bere Aita Dauid-en thronoa: eta regnaturen din Iacoben etchearen gainean eternalqui, eta haren reſumaren finic eztun içanen.* Mandatalgoa haur bera ſuſtantiaz eguin içan çayon Ioſephi:* halaber artzainey-ere erran içan çayeneã,nola Saluadorea ſorthu içan çayen cein baita Chriſt Iauna: eta etzen Aingueru batez ber ekarri içan berri haur,baina approbatu-ere bay Ainguerueʒco compainia handi batez,eta hec guciéc eman cieçoten gloria Iaunari: eta decláta ceçaten baquea lurrean.Simeon iuſtoac-ere prophetiazco ſpirituz haur bera claroqui eta goraqui eçagutu eta aboatu vkan du: ecen haourra beſſoetan çaducala errã vkan çué,*Iauna, orain vziten duc eure cerbitzaria eure hitzaren araura baquez:ecen ikuſſi dié ene beguiéc hire ſaluagarria,cein preparatu baituc populu gucién beguitharte aitzinean. Ioannes Baptiſta-ere, çacuſſanean Ieſus harengana ethorten cela Iordanean,bide beçala minçatu içan cen, cioela,* Huna Iaincoaren Bildotſa, munduaren bekatuac kencen dituena.* Apoſtoluéc-ere aboatu, predicatu eta teſtificatu vkan duté,nola gure ſaluamendutaco behar cen gucia,eta aitzinetic Prophetez erran içan ciraden gauça guciac complitu içan diraden Ieſus Chriſt Iaincoaren Seme eguiazcoan. Eta Iaunac gure demborarano teſtimonio içateco ordenatu vkan cituenec-ere halaber iracatſi vkan duté bere ſcribuez,iracurçaléc claroqui eçagut ahal deçaqueten beçala. Teſtimoniage hauc iunctatzen eta bardincen dirade guciac hambat vngui eta chuchenqui, non hain conformitate handitic agueri baita claroqui, ecen erran den gucia ſegur dela eta eguiazco: ecen ezliçate poſſible gueçurrean hunelaco conſentimendubat eta conformitatebat ahal liçaté.Baina are ez ſolamétAitac,Semeac, Spiritu ſainduac,Ainguruéc,Prophetec eta Apoſtoluec ekarri vkã dute Ieſus Chriſtez teſtimoniageric aſco,baina haren obra berec-ere eracuſté dute haré verthute gucizco

*Mat.1.20

*Luc.2.11

*Luc.2.29

*Ioan.1.29 36

*Act.2.38 eta 3.25

excellenta eta miraculuzcoa.* Eriéc, mainguëc, itsuéc, gorréc, mutuéc, paralytioéc, sorhayoéc, lunaticoéc, demoniatuéc, bay eta harçaz resuscitatu içan diraden hilec-ere asco seignale claroric eman vkan dute Iesus Christez: berçalde,* hura bere verthutez resuscitatu içan da, * bere icenean bekatuac barkatu vkan ditu. Eta hunetaracotz etzuē causa gabe erraiten, * ecen asco testimonio on cituela bere Aitac eguitera eman cerautzā obrac. Are guehiago,*gaichtoac eta harē gloriaren etsay berac-ere eguiaren claretateaz vēçutu içanic bortchatu içan dirade anhitz gauçaren confessatzera eta aboatzera, hala nola, Caiphas, Pilate, * haren emaztea eta anhitz berceric. * Ezta certaco nehorc hemen deabruén ez spiritu satsuén testimoniageric allega deçan, Iesus Christec berac hayen testimoniagea iraitzi vkan duenaren gainean. Bada, hitz gutitan erraitera, elementéc eta creatura guciéc Iesus Christ Iaunari gloria emā vkā draucate. * Haren manura haiceac cessatu içan dirade, itsasso gaiztua ematu, *arrainac bere sabelean didrachma ekarri,*harriac hari testimoniage ekartera vrratu içan dirade, templeco velá artetic erdiratu, iguzquia ilhundu, monumentac irequi, eta anhitz gorputz resuscitatu. Eta ezta deus içan ez ceruan, ez lurrean Iesus Christ bere Iainco bere Iaun bere Iabe eçagutu eta aboatu eztuenic eta hura dela saluamendu humanoarē eguitera Iainco Aitac huna beherera igorri vkan duen Embachadore handia. Gauça hauc guciac declaratu, eracutsi, scribatu eta signatu içan çaizquigu Testamentu hunetan, ceinez Iesus Christec bere Iainco Aitaren resumaco * heredero eguiten baiquaitu eta testamentu eguiten duen batec bere herederoey beçala, bere vorōdatea declaratzen draucu obratā eçar deçagunçát.*Eta guciac deitzen gara heretage hunetara personezco*aceptioneric ez considerationeric batre gabe, * arra ala emea, chipia ala handia, cerbitzaria ala nabussia, magistrua ala discipulua, bereterra ala laicoa. Hebraicoa ala Grecoa, Francesa ala Latina * igorten çayona eguiazco confidançarequin recebituren duenic, ez presentatzen çayona bessarcaturē duenic batre ezta arbuyatzen

*Mat.15.5 ioan.10.38
*Rom.1.4.
*Mat.9.2.
*Ioā.10.25
*Ioan. 11. 47.
*Mat. 27. 19.
*Mat. 8.29 luc 4.41. marc 1.25. 34.
*Mat.8.26 marc 6.51.
*Mat.17. 27.
*Mat.27. 51.
*Rom.8.17
*Act.2.39
*Act.10. 34.
*Col.3.11.
*Gal.3.2.

*Ioan.1.12 eta 17.3.

ez iraizten denic: * eta labur erraitera, bere Aitaz emaiten den ançora Iesus Christ eçaguturen, aboaturen eta recebituren duenic batre ezta iraitziric içanen. Bada hain cinez eta hain çudu handiaz guciey bardinzqui dohacunaz gueroz eta guciac Christino estimatzen garenaren gainean, suffrituren dugu hain iustoqui eta hain çucen onez guciéy bardin appartenitzen çaicun Testamentu complitu haur edequi, estal, corrumpi edo ezezta daquigun? Helas, Testamentu haur gabe, Iaincoaren resumã parteric ez ikustecoric batre ecin duquegu: haur gabe, Iesus Christec eguin drauzquigun on handiez eta promessez, bay eta harc preparatu draucun gloriaz eta dohainontassunaz escaz eta ignorant gueldítzen gara: haur gabetaric ecin daquiquegu cer Iaincoac manatzen draucun ez cer defendatzen: haur gabetaric, ona gaichtotic, ez claretatea ilhunetic, ez Iaincoaren manamenduac guiçonén ordenancetaric ecin discerni ez berez ahal ditzaquegu. *Euangelioa eta haren eçagutzea gabe, guciac gara inutil eta vano: Euangelioa eta haren eçagutzea gabe christino ecin garate: hura gabe abrastassun gucia paubrecia baicẽ ezta eta guiçonén çuhurtzia gucia, erhogoa Iaincoaren aitzinean: eta puissança gucia, flaccatassun: eta guiçonén aitzinean iustificagarri dena, Iaincoaren aitzinean condemnagarri. Baina * Euangelioaren eçagutzeaz, Iaincoaren haour eguiten gara, eta Iesus Christen haourride, * sainduen burgesquide, ceruëtaco resumaco habitant, * Iaincoaren heredero Iesus Christequin. * Eta Euangelioaren eçagutze hunez paubreac, abrats bilhatzen dirade: flaccuac, botheretsu: * erho estimatuac, çuhur: bekatoreac dirade iustificatzen, desolatuac consolatzen, dudán ceudenac seguratzen, * suiectionean ciradenac libertatean iarten. Euangelioa da vicitzezco eta eguiazco hitza: * hura da Iaincoaren puissançá, sinhesten duten gucién saluatzecotzat: * hura da Iaincoaren scientiazco gako ceruëtaco resumaco borthá fideley, bekatutaric lachatzen dituelaric, irequitẽ drauena, eta sinhesteric eztuteney, berén bekatuetan estecatzen dituelaric, ersten drauena. * Dohatsu dirade hura ençuten eta beguiratzen duten guciac, ecen halaz

*.1.Cor.1. 20.

*Gal.3.26.

*Eph.2.19.

*Rom.8.17

*Iac.2.5.

*1.Cor.3. 18.

*Ioan.8.36

*Rom.1.16

Mat.16.19

*Luc 11.28

eracuſten dute Iaincoaren haour diradela?*Baina mara- *1.Cor.16.22.
diçatu dirade hura ençun nahi eztutenac eta hari iarrei-
qui nahi etzaizconac, ecen halaz eracuſtẽ dute beabrua-
renác diradela. O Chriſtinoác, adi othoi hemẽ, eta ikas *1.Cor.14.38.
eçaçue, ecen ſegura da, *ignoranta bere ignorantiare-
quin galduren dela, *eta itſuari iarreiquitẽ çayon itſua, *Mat. 15.14.
bere itſu-aitzinecoarequin batean hobira eroriren dela.
*Ezta bidebat, eguiabat vicitzebat eta ſaluamendubat *Ioan.14.6.
baicen, eta hura da fedea eta Iaincoaren promeſſezco
ſegurãçá, baina hura nehorc ecin duque Euangelioa ga-
be, *haren ençutetic eta intelligentiatic fede vicia emai *Ro.10.17
ten da ſperança ſegurequin, *Iaincoa baitharaco chari- *1.Ioan.3.23.
tate perfectorequin, eta hurcoa baitharaco amorio e-
guiazco batequin. Non dela bada, edo certan dela erran
ahal daite çuen ſperançá, baldin Euangelio ſaindu hu-
nen ençuteaz, ikuſteaz, iracurtzeaz eta memoriotá har-
turic obratan eçarteaz errequeituric ez conturic eguitẽ
ezpaduçue? Mũdu hunetaco tractuetã bere affectioneac
eçarten dituztenéc, eriden edo penſa ahal deçatẽ moien
oroz, ez gorputzic ez onic batre guppida eztutelaric,
bere vorondate pauſſatuaren iragaiteari eta cõplitzeari
darreitza, eta gucia, begui erts-irequi arte batẽ ſegurã-
çaric eztuen gorputz miſerable eta gaicho hunẽ cerbi-
tzatzeagatic. Eta dãnatione eternalaren menetic ilkiric
vicitze eternalarẽ vkaiteco eta ſeculacotz ceruëtaco re-
ſumã heretatzeco moiena Euangelioã iracaſtẽ çaicuna-
rẽ gainean, hain errachqui ahal daidigularic, dembora
duguno, hain importantia eta mengoa handitaco Euan-
gelio, huni iarreiquiteaz eta behatzeaz errequeituric
eztugu eguinen? Mundu hunetan vici beharrezco
moien chipitaco officioetan-ere, badacuſſagu cembat
dembora eta cembat pena nehorc eçarten duẽ: eta ſtatu
handiagotaco nahi diradenac, anhitz dẽbora eta on de-
ſpẽdatzen dutelaric, gau eta egun tormentatzen dirade
nondic mundu hunetaco ſcientia haice eta lanho bai-
cen eztiradenetan auança ahal daitezqueen. *Eta *Mat.13.11.
gu cembatez cineçago emplegatzeco gara Iaincoac
bere Euangelio ſaindu hunetan reuelatu eta declara-
tu drauzquigun myſterio eta ſecretu handi hauta-
co eçagutzearen vkaiten? Eri denac edo cembeit

atchaquia gorputzean duenac, ençun ez penſa ahal deçan remediatzeco moienic eztu enſeyatu gaberic vtziten: eta gure arimetaco eritaſſunén eta atchaquia handién ſendatzeco eta remediatzeco moien bakoitza, eta behar dugun on guciaren complimendua Euangelioan preſentatzen baitzaicu, hain behar handian eta ondicozcoan notchalent eta anſicabe içanen gara? Ez ſegur, Iaincoaren diradenac. Ecen ezta deus Euangelio ſaindu hunetaric Iaincoaren haourrac erauz, ez harçara ez vrrund ahal ditzaquenic: ez gaitzetſi edo menoſpreciatu içatec: ez eſcarnioc, ez mundu hunetaco onén eta ohoré galtzec. *Badaquigu bide haur bera dela Ieſus Chriſt Iauna iragan den bidea, *haren diſcipulu nahi bagara, hari iarreiqui behar gaitzaitza: eta Euangelioari iarreiquiteagatic guiçonéz iniuriatu, menoſpreciatu, gaitcerran eta iraitzi içatea, etzaicu gaitzi içateco ez eztugu refuſatzeco, Iaincoaren iugemenduan ohoratuac preçatuac eta glorificatuac içanen garela ſegurança emaiten çaicunaren gainean. Bada eçagutze hunetaric guibeleratzeco gaitu perſecutionec edo açotatu eta iraitzi içatec edo abraſtaſſunen edo onhaſſunen galtzec? Ez: ecen badaquigu gu herri batetaric iraitziac içanagatic *Iaunarena dela lurra: eta lur gucitic iraitziac garen orduan-ere, alabaina Iaincoaren reſumatic ezgarela iraitziac içanen: eta pillatuac eta paubretuac garen orduãere, Aitabat badugula gure hatzeco aſco abratſic ſegur gara: *eta are Ieſus Chriſt paubre eguin içan dela haren paubre içateari patientiarequin iarreiqui gaquitzonçat. Bada ſegurança hunetaric aldaraturen gaitu afflictionec preſoindeguic, eſtiratu içatec, edo berce tormentac? Ez, *ecen badaquigu haur dela Ieſus Chriſté exéplura Iaincoaré haourré gloria eternalera heltzeco bidea, eta eztela herioric-ereeguiazco vicitzea edequi ahal dieçaquegunic. Ezta cer, Ieſus Chriſt Iauna bethi iabeturé çaiçu promes draucú beçala, *ecé ſeguratzen gaitu munduarẽ finerano gurequin içané dela, eta hura gurequin denarẽ gaineá, *ecin hel daquidigu hain múduco eguitate gaitzic ez malediƈtione hádiric, nó gure probetchutá bnedicatua eta ſanƈtificatua eztén, ez hain gaitz hádiric, nó

*Luc 24.26 *Mat. 16. 24. *Pſal. 24. 1. *2. Cor. 8. 9 *Luc 24. 26 act. 14. 22. *Mat. 28. 20. *Ioan. 11. 25.

gure emendiotan eta gure hobeagoatic eztén. Ezgaitecela bada desconforta, mundu gucia bere bothere eta indar ororequin gure contra altchatua ikus gueneçan orduan-ere: ecen promessac ecin falta daidi, ceinetan erraiten baitzaicu * ecen Iauna garaitic trussaturen dela, haren contra altchaturen diraden biltzarre eta enseyu guciéz. Eta Iaincoaren cerbitzari eguiazcoac gure beguién aitzinean esteyari hiltzen edo martirizatzen dacusquigunean-ere ezgaitecela, sperança gucia galdu baliz beçala, desconsola: ecen latinez lehen scribatu duen doctor christinoetaric batec, Tertulianec, eguiazqui erran vkan duen beçala, Eliçaren aitzinaratzeco eta auançatzeco hacia Iaincoaren hitzaren sustengatzeagatic hiltzen diradé Martyrioen odola da: eta hala bethi phorogatu içan da, eta munduaren finerano hala içanen-ere da. Are badugu consolatione handiagobat eta fermuagobat-ere, eta hura da, mundu hunez ethiric, eta gure spirituco beguiac ikus ahal daitezqueen gauça orotaric retiraturic, gure affectione principal gucia seculaco içate gloriazcoan sossega eta paussa deçagun, * bethi patientiarequin Iaincoaren iugemendu handi, guiçonén entrepresa guciac moment batez berçaldera itzuliren dituenaren beha gaudelaric. Haur içanen da, Iaincoaré resuma orain sperançaz dacussaguna, claroqui manifestaturen denean: eta Iesus Christ munduaren iugeatzera bere maiestate handian bere Aingueruequin aguerturen denean. * Orduan itzurteric batre gahe Regue handi hunen throno iudicialaren aitzinean comparitu behar vkanen dute on eta gaichto guciéc personalqui. Eta Testamẽtu hunetã fermu egon diratenac, *eta Iainco Aitaré vorondatearen, beguiratzẽ emplegatu diratenac, içanẽ diradé escuineco aldeã eguiazco haour anço, eta recebituré duqueite vkan duqueitéfedearé fina, baitate saluamendu eternala. Eta nola Iesus Christ eta haré doctriná menospreciatzen ciradela çacussatenean eztirate haren aithortzera eta confessatzera ahalque içan, hala participant-ere içanen dirate haren glorián, eta harequin batean eternalqui coroatuac, * Baina Euangelio saindu haur menospreciatu eta iraitzi duqueité gaichto desobedientac eta reprobatuac: *halaber, bere ohorén,

* Psal. 2.4
*Iac.5.8.
*Mat.25.31.
rom.14.10
2.cor.5.10.
Mat.25.33
*1.Pier.1.9
*Mat.10.32.

abraſtaſſunén eta ſtatu handien entretenitzeagatic, Ieſus Chriſtequin humiliatu eta beheratu nahi içan eztiratenac: eta guiçonén beldurragatic Iaincoaren beldurra vtzi vkan duqueitenac, Aita eguiazcoaren deſobedient eta baſtard anço, * içanen dirate ezquerreco aldean eta, iraitziren dirate maledictionetara, eta bere deſleyaltatearen recompenſamendutan recebituren duqueite damnatione eternala. Orain bada othoi, Chriſtinoác aditzen duçuenaz gueroz, nola Ieſus Chriſtec preſentatzen drauçuen bere Euangelioa, * ceinetan baita Iaincoaren promes eta gratia gucién complimendua, declaratzen drauçuelaric * nola bere Aitaz igorriric lurrera iautſi içan den, eta guiçonén artean conuerſaturic, * aitzinetic haren Leguean eta Prophetetan erran içan cen beçala, nola gure ſaluamendutaco behar içan den gucia complitu vkan duen, ſegur baino ſegurago içateco çarete, ecen Euangelioan paradiſuco theſaur guciac çabaltzen eta irequiten çaizquiçuela, eta Iaincoaren on handiac deſplegatzen, bay eta vicitze eternala eracuſten eta emaiten. * Ecen haour da vicitze eternala, Iainco eguiazcoaren beraren eta Ieſus Chriſt harc igorri duenaren eçagutzea: * Ieſus Chriſt haur baithan ordenatu vkan drauçu Iaincoac gure ſaluamenduaren hatſea, artea eta fina. * Haur da bere Aitaren ſeme maite ſacrificiotan Iſaac ſacrificatua, *eta halere ezpaita herioaren puiſſançaren meneco gueldittu içan. * Haur da beguiraz dituen ardiéz arrangura handia duen Iacob artzain iratzarria. * Haur da bere gloria guciarequin bere anaye bachoén eta on-beharrén eçagutzea eta recebitzea laido içan etzayon Ioſeph anaye gogaberá eta ona.*Haur da bethierecotzat behingoaz ſacrificio eguin vkan duen Melchiſedech Sacrificadore eta Ipizpicu handia. * Haur da bere Leguea gure bihotzezco tauletan bere Spirituaz ſcribatzé duen Moyſes Legue-eçarle ſubiranoa. * Haur da lur promettatura gure guidatzeco Capitain eta Guidaçale Iehoſuach fidela.*Haur da puiſſança deſobedient gucia bere ſuiectioneraerekartě duen Dauid victorioſoa eta noblea. *Haur da baque eta pro-

*Mat.25.41.
*2.Cor.1.20.
*Ioan.5.23
*Luc24.44
*Ioan.17.3
*Act.4.12
*Gen.22.9.
Act.2.24.
*Ge.31.40
*Heb.2.11.
*Heb.7.24,27.
*Exod.20.21.
2.cor.3.3.
*Ioſue.1.6.
*2.Sam.2.10.
*1.Reg.3.1

ſperitate onetan bere reſumá gobernatzen duen regue Salamon triumphanta eta magnificoa. * Haur da bere herioaz bere etſayac accablatu eta deſeguin dituen Sanſon erſcona eta verthutetſua. * Eta guehiago dena, Ieſus Chriſt haur baithan berean erideiten da nehorc penſa edo deſira ahal leçaqueen on guciaren complimédua. Ecé haur* humiliatu eta beheratu içan da, gure exaltatzeagatic eta goratzeagatic: * ſuiet eguin içan da, gure libertatetan eçarteagatic: * paubre eguin içan da, gure abratſeagatic: * ſaldu içan da, gure redemitzeagatic: captiuó eguin içan da, gure deliuratzeagatic: condemnatu içan da, gure condemnationetaric idoquiteagatic: *malediɛtione eguin içan da, gure benedicatzeagatic: bekatuén cauſazco ſacrificio eguin içan da, gure iuſtificatzeagatic: desfiguratu içan da, guri itchura emaiteagatic: hil içan da, guri vicitze ligunçat. Halaco maneraz non hunen beraren moienez içan baita gogorgoá ematu, haſſerretaſſuna amatigatu, ilhuna clartu, iniuſtitiá iuſtificatu, flacqueçá indartſutu, deſconfortua confortatu, bekatua empatchatu, menoſprecioa menoſpreciatu, beldurra aſſeguratu, çorra quittatu, nequea aiſetu, trabaillua arindu, triſtitiá alegueratu, malediɛtionea benedicatu, ecina errachtu, deſordrea arengatu, çathitua vnitu, laidoa anoblitu, deſobedientiá aſſuietitu, mehatchua mehatchatu, embuſcadá embuſcatu, garaita garaithu, bortchá bortchatu, combata combatitu, mendequioa mendecatu, tormentua tormentatu, damnationea condemnatu, abyſmea abyſmatu, iffernua enferratu, herioa heriotara eman, mortala immortaltu: eta labur eraitera, hurrupatu eta iretſi vkan du miſericordiac miſeria gucia, eta ontaſſunac dohacabetaſſun gucia. Ecen gure contra cóbatitzeco deabruaren harma eta gure contra colpatzeco herio ezten ohi ciraden gauça guciac Ieſus Chriſtez eguin içá çaizquigu, gure probetchua ahal daidiquegun beçalaco exercitio: halaco maneraz non, glorifica ahal baiquaitezque. Apoſtoluarequin, diogula, * O iffernua, non da orain hire viɛtoria? o herioá, non da hire eztena? Bada elegitu guciey promettatu içan çayen Chriſten

*Iug.16.30
*Mat.20.28. col.2.15.
*Phili.2.8.
Rom.8.2. gal.5.1.
*2.Cor.8.9
*Mat.27.26.
*Gal.3.13. 2.cor.5.21
*1.Cor.15.55.

*Gal.2.20. Spiritu hunetaric heldu da, *ezpaicara gu guehiagoric vici, baina Christ vici baita gutan, eta *spirituz
*Eph.2.6. ia oraindanic iarriac baicara ceruëtan diradenén artean, mundua guehiagoric mundu etzaicun becembatean, hartan oraino conuersatzen badugu-ere, *baina
*Phil.4.11. contentamendu dugularic gauça guciéz, herriz, lekuz, vicitzeco conditionez, habillaméduz, viandaz eta berce hunelaco gauçaz: *eçagutze hunequin confortatuac eri
Rom.5.3. *2.Cor.6.10 deiten gara tribulationeá, *aleguera tristetián, dohatsu gaitzetsiac eta menospreciatuac garenean, abundos eta bihotz onetaco, paubrecián eta peituan: finean vici erideiten gara herioan-ere. Bada hitz gutitan erraitera, guçaz onic içatecotz, Scriptura gucian diligentqui bilhatu eta eriden behar duguna da, *Iesus Christ gure
*Ioan.17.3 Iauna, eta haren moienez Iainco Aitaz presentatzen eta emaiten çaizquigú on gratiazcoac eta complituac vngui eta eguiazqui eçagut ditzagun. Ecen nehorc Leguea eta Propheta guciac vngui mira eta considera ditzaneá, eztu eridenen hitzbat-ere hunetara beha eztagoenic eta hunetara guidatzen ezgaituenic. *Bada intelligétiataco
*Coloss.2.3 eta çuhurtziataco thesaur guciac Iesus Christ Iaunean gordeac diradenaz gueroz eztugu certaco berce, chedetara buru daguigun, baldin gure nahi propiz iaquiara eta dacussagularic, eguiazco arguitic aldaraturic eta erauciric, gueçurrezco ilhumbeari, gure damnationetan iarreiqui nahi ezpagaizquio. Eta hunetacotzat dio S. Paulec ecen *eztuela deus iaquitera ez eçagutzera estimatu
*1.Cor.2.2. vkan Iesus Christ baicén, eta hura crucificatua. Ecen haraguiaren opinioneari eçagutze hunen beharquia gauça communa eta gauça bachoa dela iruditzen baçayoere, halacoa da, non asco baita eta mereci baitu, gure mende gucia hartara gogoatuqui applica deçagun. Eta eztuquegu gure dembora galdu, gure adimendu eta affectione gucia hartan probechatzera eta auançatzera emplegatu duquegun orduan. *Iaincoaren eçagutze e-
*Ioan.17.3 guiazco haur hain complimendu handitaco denaz gueroz, hunen eguiazqui vkaitea baicen, gure arimén doctrina spiritualarençát, cer berceric mundu hunetan
2.Cor.3.18 eta 5 21. desira ahal guenecaque? hunez* Iaincoaren imaginara

transfor-

transformatzen garela, eta haren iustotaſſunean participant eguin içanic, haren irudi gloriazcoa gutan imprimitzen dela, *eta Ieſus Chriſtē moienez harē haour eta heredero eguinic ceruëtaco reſumá cóplituqui poſſedituren dugula ſeguratzen garenaren gainean? Bada egundanoz gueroztic Iaincoa bethi eçagutzera eman içan da eta contemplatzera: baina gucietaco claroquiena Ieſus Chriſten beguithartean. Harren ezta ſori Iaincoac eman draucun moien hunetaric den gutiena-ere aldara ez erauz gaitecen. Baina da guciz neceſſario gure adimendua bere ahal guciaz Scripturan arraſta eta funda dadin, ikas deçagunçat Ieſus Chriſt Iaunaren, gure remedio bakoitzaren eçagutzen, harçaz Iainco Aita perfectione gucia bera baithan duenagana guida gaitecençat *ecen hura da bidea, eguia eta vicitzea, nehor ezta haren moienez baicen Aitagana ioaiten. Bada berriz erraitera, huna non conſiſtitzen den ſecula hunetan guiçonéc comprehendi ahal deçaqueten eta ikaſſi behar duten ſapientiá: ceini ez Aingueruc ez guiçonec, ez hilec ez vicic ezpaitrauca deus eratchequiteco ez edequiteco. Haur da bada chedea, non gure adimendua arraſtatu eta pauſſatu behar baitugu, deus hunequin guretic nahaſtecatu gabe, ez eta huni eratchequi lequidion doctrinaric batre recebitu gabe. *Ecen gure ſaluamenduco beharquian, hunetan iracaſten çaicunaz berçalde ſyllaba baten-ere iracaſtera iarten liçatena, behar da maradicatutan eduqui Iaincoaren eta haren Eliçaren aitzinean.

*Rom. 8. 17

*Ioan 14. 6

*Gal. 1. 8. apoc. 22. 18

*TESTAMENTV ÇAHARRAC eta berriac iracasten draucuten guciaren sommarioa.*

TEstamẽtu çaharreco liburuẽc iracasten gaituzte ecen Adamec, Noec, Abrahamec, Isaac-ec, Iacob-ec, Dauid-ec eta berce gure Aitéc adoratu vkan duten Iaincoa, dela eguiazco Iaincobat bera, bothere gucitaco eta eternal: bere ontassun handiagatic ceruа eta lurra eta hetan diraden gauça guciac bere Hitzaz creatu dituena, ceinaganic gauça guciac heldu baitirade, eta hura gabe deusec içateric eztu. Ceinec eguiten baitu iustitia eta misericordia, bayeta goitico gauça guciac gauça gucietan eta leku gucietan, berac placer duen beçala. Eta ezta nehor hain ausartic içateco, non hari derrón, cergatic eguiten duena, hunela edo hala eguiten duen.

Guehiago, liburu hec declaratzẽ draucute, nola Iainco gucizco gorác eta bothere gucitacoac, berce gauçác creatu cituen ondoan, creatu vkan çuen Adam lehen guiçona, bere irudi eta imagina spiritualera, hura eguiten çuelaric gauça gucién iabe lurrean. Baina deabruaren inuidiaz eta enganioz desobedientiatan eror cedin Adam bere Creaçalearen manamenduaren iragaitez eta hauftez: eta bere bekatuaz halaco kotsua eta poçoina mundura eman vkan du, non haren arraçatic heldu garen gucioc gure naturaz Iaincoaren hiraren eta punitionearen digne baicara: herioaren eta damnationearen suiet, eta deabruaren tyranniaren eta bothere arenmeneco eguin içanic.

Halaber, liburu noble eta excellent hetaric eçagutzen dugu, nola Iaincoac lehenago promettatu vkan ceraué Adami, Abrahami, Isaac-i, Iacob-i, Dauid-i, eta anhitz berce lehenagocori, ecen igorriren luela dohain onezco hacia, Iesus Christ bere Seme gure Saluadorea:

eta harc deliuraturẽ eta idoquirẽ lituela bekatutaric eta deabruaren tyranniatic eta suiectionetic, fede viciz eta obratzen luen sinheftez promes hec sinhetsiren lituzten guciac, hura baithan berean eçarten lutelaric bere confidança eta sperança gucia, eta promettatu içan çayen beçala deliuraturen eta libertatetan eçarriren-ere baliradela.

Guehiago liburu hec aditzera emaiten draucute eta iracasten gaituzte nola lehenagoco Aita Israelitác, promettatu içan çayen deliurançaren beguira ceuden bizquitartean (ceren guiçona baita hambat natura fierretaco eta corrumpitutaco, non ezpaitu bere burua hain bekatore eçagutu nahi non Redemptore promettatuaren behar den) Iainco Iaunac eman vkan çuen bere Leguea Moysesez, bi harrizco taulatan scribatua: harçaz guiçonéc eçagut leçatençat cer den bekatua eta guiçonaren bihotzeco eta gogoco malitiá eta gaichtatassuna, halatan affectionatuquiago eta ondicozago Iesus Christen ethortea desira leçatençat, harc bekatuaren menetic deliura eta redemi litzançat, Legueac ez Legueco sacrificioéc ecin citzaqueiztenaz gueroz, ecen hec deus etzuten cerbitzatzen Iesus Christec bekatuaren abolitzeco eta iraunguiteco bere gorputz propriaz eguin behar çuen eguiazco oblationearen represẽtatzeco baicen.

Testamentu berrico liburuëz den becembatean, hec aditzera eta eçagutzera emaiten draucute, nola Iesus Christ Regue eta Messias handi promettatu içan cena (cein baita Iainco eguiazco gauça guciaren gainetic laudatzecoa) Testamentu çaharreco liburuëtan figuratua eta representatua, nola azquenecotz haren Aitac bere baithan ordenatu eta arrastatu çuen demborán mundu hunetara igorri vkan duen: baitzén iniquitate eta gaichtaqueria guciac regnatzen çuen demborá. Bada Iesus Saluadorea igorri içan da, eta haragui humano harturic, eta herio eta passione iraganic resuscitatu içan da: ez nehorc eguin ahal lituqueen obra onén causaz (ecen guciac ciraden bekatore) baina bere erranetan eta eguinetã bethiere eguiati den Iaincoac bere gratia promettatu çuenaren abrastassun handiac eman lietzagun-

çat, eta bere misericordiaz salua guençançat.

Bada Testamentu berrian claroqui eracusten çaicu, nola Iesus Christ eguiazco Bildotsa, eta guiçonén bekatuac edequité dituen eguiazco oblationea, ethorri içan den bere Aitaren eta gure artean baquearen eguitera, eta harequin gratiatan eta amoriotan gure eçartera: gure bekatuac bere odolaz ikuciric eta garbituric, eta gu deabruaren suiectionetic deliuraturic eta idoquiric adopta eta Iaincoaren haour eguin guençançat, eta bere Aitaren Resuma çabaleco eta complituco herederoquide berequin eguin guençançat.

Eta Iaincoac eguin drauzquigun on handi eta excellent hauc eçagut ditzaguncat, emaiten draucu bere Spiritu saindua, ceinec sinhets eraciten baitraucu Iainco Aita baithan, eta harc igorri duen Regue eta Messiasa baithan. Ecen segur, Spiritu sainduaren operationea gabe (ceinec instruitzen eta sinhesten dugun gauça guciaz certificatzen eta seguratzé baiquaitu) ecin sinhests guneçaque nola Messiasa igorri vkan duen Iaincoac mundu hunetara, ezeta nola Messias hura Iesus den. Ecen S. Paulec erraiten duen beçala, Nehorc ecin eguiazqui cófessa deçaque, Iesus Iainco eta Iaun dela eta harc saluatzeco botherea duela, baldin Spiritu sainduaré moienez eta inspirationez ezpada. Spiritu hunec berac testificatzen eta sinhests eraciten drauca gure spirituari, ecen Iaincoaren haour garela, eta eraustren eta çabaltzen du gure gainera S. Paulec Corinthianoetaratco epistolán scribatzen duen charitate eta amorio hãdia. Fedeaz eta charitateaz berçalde, Spiritu hunec berac emaiten draucu sperança vkaiteco verthutea, baita seguranççarequin vicitze eternalaren eta seculacoaren beguira egoitebat, eta vicitze hartaco segurançá emaiten draucu, prestuzco beharquian bahi on batec segurança emaiten duen ançora: eta anhitz berce dohain eta gratia spiritual-ere emaiten draucu S. Paulec Galatianoetaratco epistolán erraiten duen beçala. Bada fedearen fructua eta irabacia ezta guti estimatzeco, ez verthute chipitaco: ecen Iesus Christ Iauna baithara dugun fedeaz (cein charitatezco obrez eracusten baita, hartara nehor inci-

tatzen duelaric) iustificatzen eta sanctificatzen gara: erran nahi da, ecen Iaincoac, Iesus Christ gure Iaunaren Aitac (cein gure Aita-ere baita, Iesus Christez eguin içan çaicun adoptionearen causaz) bere gratia puragatic eta ontassunagatic iusto eta saindu gadutzala Iesus Christ bere Seme gure Iaunaren merecituaren eta satisfactionearen verthutez, gure bekatuez estimationeric ez conturic batre eguiten eztuelaric, eta hayen causaz eta respectuz herio eta pena eternalera condemnatzen ezgaituelaric.

Guehiago, ethorri içan da mundu hunetara Iesus Christ, harçaz eta hartan hure bekatuetaric purgaturic eta sanctificaturic, vngui eguiteco exemplu hura baithan har gueneçançat, haren vorondateari iarreiquiz, obra onic eguinez, haraguiaren obra eta eguitate guciez renuntiatuz, eta gogo eta vorondate prest eta deliberatu batez Iauna, berac manu beçala, cerbitzatuz, gure vici gucian iustoqui eta sainduqui gure içatea iraganez: gu iayo gabe Iaincoac guçaz eguinen ciradela preparatu eta ordenatu cituen obra onez bethi eracusten dugularic ecen fedezco gratia eta dohain hunetara deithuac garela. Eta obra on hauc eguiten eztituenac, eracusten duque claroqui, ecen eztuqueela harc Iesus Christec gutaric batbederaganic galdeguitẽ duẽ fedea.

Saluadore hunegana bada ioan eta retiratu behar gara, huni bihotz on eta libre batez iarreiqui behar gaitzaitza, iracats gaitzançat: ecen hura da gure Magistrua eta Iabea emeric eta gogaberaric, bayeta gure exemplua eta patroina, harenganic vngui vicitzeco manerá ikassi behar dugu.

Eta berçalde, hura da gure arimén Ipizpicua eta Pastora, hura da berac bere vorondate propriz guregatic bere odola issuri duen Sacrificadore handia, Iaincoaren eta gure arteco Arartecoa eta baque eçarlea, Iainco Aitaren escuinean iarria dena, gure Aduocat eta Arartecо guregatic interceditzen eta othoitz eguiten duena: eta gauça segura eta guerthua da, berac seguratu eta iracatsi gaituen beçala, ecen harc bere Aitaganic impetraturen duela, cerere hari berari edo haren icenean ha-

ren Aitari eſca bagaquitza, baldin eſquez gaudenean ſinheſten badugu, hala eguinen draucula: ecen hala promes draucu eta bere hitzaren Iabe da. Bada bekatutan eror bagaitez, eztaguigula dudaric eguiazco dolurequin (ceinetara bere predicationén hatſeandanic Ieſus Chriſtec gomitatzen eta exhortatzen baiquaitu) eta eguiazco federequin throno realera ioaitera, non hura baita iarria, ez rigorez vſat deçançat, baina eſcaturen diradeney gratia daguiençat: eta halatan miſericordia eguinen draucu: ecen hura ethorri içan da mundura, bere gratiaz bekatoreac ſalua ditzançat.

Ieſus Chriſt haur bera da bere Aitaz determinatu eta ordenatu içan çayon demborán, ethorriren-ere dena, eta bere thronoan maieſtate handirequin iarriric, guiçon guciac iugeaturen dituena, eta batbederari vnguia bada gaizquia bada, eguin duqueenaren araura rendaturen draucana. Eta bere eſeuinecoey, vicitze eternalaren beguira egon diratenev, erranen draue, Çatozte, vicitze eternalaren vkaiteco ene Aitaz elegitu içan çaretenác, har eçaçue poſſeſſione munduaren creationetic preparatu eta aſſignatu içan çaiçuen reſumán. Eta berçaldera, haren ezquerrean diratenev, erranen draue, Parti çaitezte eneganic, creatura maradicatuác eta reprobatuác, eta çoazte deabruari eta haren ainguerueу preſt eta paratua dauen ſu eternalera. Eta orduan date munduaren fina, Ieſus Chriſtec bere etſay gucién gainean victoria vkanic, Iainco bere Aitari, orain harenganic daducan reſumá rendatu eta emán drauqueonean.

Eta erran diraden gauça hauc eçagut ditzagunçat, Iaincoaren vorondate ona içan da, haren Spiritu ſainduaz eman lequizquigun Bibleco liburuac ſcribuz, eta hetango doctrinaren predicationea licén, eta doctrinarequin Sacramenduac, doctrina hartango eguiá ciguilatua beçala licençat. Bada hauc guciac eguin içan dirade eçagut eta ſinhets deçagūçat ecen eztela Iainco eguiazcobat eta promettatu beçala harc igorri duen Ieſus Chriſtbat baicen, eta ſinheſtez vicitze eternala Ieſus Chriſt hunez dugunçat.

Hunez berce fundamentic ecin nehorc eçar deçaque

Iesus Christen Eliçán, ceinen gainean Eliçá fundatua baita, eta S. Paulec desiratzen du, hunez berce federic, edo Iesus Christez den saluamenduaz berceric predicaturen duen gucia Iaincoac deseguin, abysma eta sunsi deçan, are cerutic ethorri Ainguerubat baliz-ere.

Bada Iainco Aitari, ceinaganic eta ceinez eta ceinenac baitirade gauça guciac, eta Iesus Christ haren Seme gure Iaun eta redemptoreari, eta Spiritu sainduari dela ohore eta gloria secula seculacotz. Amen.

## *TESTAMENTV BERRICO liburuën icenac.*



### S. PAVLEN EPISTOLAC.



### EPISTOLA CATHOLICOAC.

# IESVS CHRISTEN EVANGELIO SAINDVA S. MATHEVEN ARAVRA.

## CAP. I.

*1 Iesus Christen burhasso eta haraguiaren arauezco aitzinecoac. 18 Nola hura Spiritu sainduaganic concebituric, Maria virgina Iosephen emazteaganic iayo içan den. 21 Cergatic icen eman çayon Iesus. 23 Emmanuel.*

1 *IESVS CHRIST Dauid-en semearen, Abrahamen semearen generationeco Liburuä. *Luc.3.24.*

2 * Abrahamec engẽdra ceçã Isaac. * Eta Isaac-ec engendra ceçan Iacob. *Eta Iacob-ec engendra citzan Iuda eta haren anayeac. *Gen.21.2.* *Gen.25.24* *Gen.29.35*

3 *Eta Iudac engendra citzan Phares eta Zara Thamarganic. *Eta Pharesec engendra ceçan Esrom. Eta Esromec engendra ceçan Aram. *Gen.38.27.* *1.Chro.2.5.* *ruth.4.18.*

4 Eta Aramec engẽdra ceçan Aminadab. Eta Aminadab-ec engẽdra ceçã Naasson. Eta Naas-

ſonec engendra ceçan Salmon.

5 Eta Salmonec engendra ceçan Booz Rachabganic. *Eta Boozec engendra ceçan Obed Ruthganic. Eta Obed-ec engendra ceçan Ieſſe.

1.Sam.17.12.

6 *Eta Ieſſec engendra ceçan Dauid reguea. *Eta Dauid regueac engendra ceçan Salomon Vriaſen *emazte içanaganic.*

2.Sam.12.24.
1.Reg.11.43.

7 *Eta Salomonec engēdra ceçan Roboam. Eta Roboamec engendra ceçan Abia. Eta Abiac engendra ceçan Aſa.

1.Chron.3.10.

8 Eta Aſac engendra ceçan Ioſaphat. Eta Ioſaphatec engendra ceçan Ioram. Eta Ioramec engendra ceçan Ozias.

9 Eta Oziaſec engendra ceçan Ioatham. Eta Ioathamec engēdra ceçan Achaz. Eta Achazec engendra ceçan Ezechias.

10 *Eta Ezechiaſec engendra ceçan Manaſſe. Eta Manaſſec engendra ceçan Amon. Eta Amonec engendra ceçan Ioſias.

2.Reg.20.21. eta 21.18.
1.Chron.3.13.

11 *Eta Ioſiaſec engendra ceçan Iacim. Eta Iacimec engendra citzan Iechonias eta haren anayeac, Babylonerat eraman içan cira denean.

5.Reg.23.34. eta 24.1.
2.Reg.24.6.

12 Eta Babylonerát eraman içan ciraden ondoan, *Iechoniaſec engendra ceçan Salathiel. *Eta Salathielec engendra ceçan Zorobabel.

1.Chron.3.16.
1.Eſdr.5.2.

13 Eta Zorobabelec engendra ceçan Abiud. Eta Abiud-ec engendra ceçan Eliacim. Eta Eliacimec engendra ceçan Azor.

14 Eta Azorec engendra ceçan Sadoc. Eta Sadoc-ec engēdra ceçan Achim. Eta Achimec engendra ceçan Eliud.

15 Eta Eliud-ec engendra ceçan Eleazar. Eta Eleazarec engendra ceçan Mathan. Eta Mathanec engendra ceçan Iacob.

16 Eta Iacob-ec engendra ceçan Ioseph Mariaren senharra, *ceinaganic iayo içan baita Iesus, cein erraiten baita Christ.

*ceinaganik Mariaganic.*

17 Bada Abrahamganic Dauidgananoco generatione guciac, *dirade* hamalaur generatione. Eta Dauidganic Babylonerat eraman içan ciraden arteranoçoac, hamalaur generatione. Eta Babylonerat eraman içan ciradenetic Christgananocoac, hamalaur generatione.

18 Bada Iesus Christen sortzea hunela içan da. *Ecen Maria haren ama Iosephequin fedatua cela, hec elkargana gabe, içorra eriden cedin Spiritu sainduaganic.

*Luc. 1. 27.*

19 Orduan bere senhar Iosephec, ceren iusto baitzen eta ezpaitzuen hura *diffamatu nahi, secretuqui vtzi nahi vkan çuen.

*Deut. 24. 1*

20 Baina gauça hauc gogoan cerabiltzala, huná, Iaunaren Ainguerua aguer cequion ametsetaric, cioela, Ioseph Dauid-en semeá, ezaicela beldur eure emazte Mariaren hartzera: ecen hartan cõcebitu dena, Spiritu sainduaganic duc.

21 Eta erdiren duc seme batez *eta deithuren duc haren icena Iesus. Ecen harc *saluaturen dic bere populua hayen bekatuetaric.

*Luc. 1. 31.*
*Act. 4. 12.*

22 Bada haur gucia eguin içan da, Iaunac Prophetáz erran vkan çuena compli ledinçát, cioela,

23 *Huná, virginabat içorrá içanen da, eta er-

*Esa. 7. 14.*

diren da ſeme batez, eta deithuren duté haren icena Emmanuel, cein erran nahi baita hambat nola, Iaincoa gurequin.

24 Lotaric iratzarturic bada Ioſephec eguin ceçan Aingueruäc manatu cerauçan beçala, eta har ceçan bere emaztea.

25 Eta etzeçan hura eçagut, bere lehen ſemeaz erdi cedino: eta deiceçá haré icena Ieſus.

CAP. II.

*1 Chriſt Bethlehemen iayo. 11 eta Orientetic ethorri Çuhurrez adoratu. 13 Guero Ioſephec hala manamendu vkanic Ieſus eta haren ama Maria harturic Egyptera ihes eguiten. 16 Herodeſec haour chipiac hiltzen. 21 Ioſeph ama-ſemequin Egyptetic itzuliric, Nazarethera ethorten.*

1 IAyo cenean bada Ieſus Bethlehem Iudeacoan regue Herodeſen demborán, huná, Çuhurrac Orientetic ethor citecen Ieruſalemera,

2 Cioitela, Non da Iuduén regue iayo dena? ecen ikuſſi dugu haren içarra Orientean, eta ethorri gara hura adora deçagunçat.

3 Bada regue Herodes ençunic *hori* trubla cedin, eta Ieruſaleme gucia harequin.

4 Eta bilduric Sacrificadore principal guciac eta populuaren Scribác, informa cedin hetaric non Chriſt ſortzeco cen.

5 Eta hec erran cieçoten, Bethlehem Iudeacoan, ecen hunela ſcribatua duc Prophetáz,

*Mich.5.2. ioan.7.42.*

6 *Eta hi Bethlehem Iudaco lurrá, ezaiz Iu-

daco gobernadorén arteco chipiena, ecen hireganic ilkiren duc, Israel ene populua bazcaturen duen gobernadorea.

7 Orduan Herodes secretuqui Çuhurrac deithuric informa cedin hetaric diligentqui, içarra aguertu içan çayen demboráz:

8 Eta hec Bethlehemerat igorriric, erran ciecén, Ioanic informa çaitezte diligẽtqui haourtchoaz: eta eriden duqueçuenean, iaquin eraci iecadacue, nic-ere ethorriric adora deçadan hura.

9 Hec bada reguea ençunic parti citecen: eta huná, Orientean ikussi vkan çuten içarra hayén aitzinean ioaiten cen, haourtchoa cen lekuaren gainera ethorriric gueldi cedino.

10 Eta içarra ikussiric bozcario handiz boz citecen haguitz.

11 Eta etchera sarthuric eriden ceçatẽ haourtchoa bere ama Mariarequin: eta ahozpez adora ceçaten hura, eta bere thesaurac desplegaturic presenta cietzoten estrenác, vrrhe, encensu, eta myrrha.

12 Eta diuinoqui ametsetan aduertitu içanic ezlitecen Herodesgana itzul, berce bidez retira citecen bere comarcarát.

13 Bada hec retiratu eta, huná, Iaunaren Aingueruä aguertzen çayó Iosephi, dioela, Iaiquiric har itzac haourtchoa eta haren ama, eta ihes eguic Egyptera: eta aicén han *nic* darraqueadano: ecen Herodesec bilhaturen dic haourtchoa hiltzeco.

14 Iosephec bada iratzarri eta, har citzan

haourtchoa eta haren ama gauaz, eta retira cedin Egyptera.

15 Eta egon çedin han Herodesen finerano, Iaunac Prophetáz erran çuena cõpli ledinçát, cioela * Egyptetic deithu vkã dut neure Semea.

Osé.11:1.

16 Orduan Herodesec ikussiric nola Çuhurréz enganatu içan cen, asserre cedin haguitz: eta *bere gendea* igorriric hil citzan Bethlehemen eta haren aldiri gucietan ciraden haour bi vrthetaco eta behereco guciac, Çuhurretaric diligentqui informatu içan cen demboraren araura.

17 Orduan compli cedin Iaunac Hieremias Prophetáz erran vkan çuena, cioela,

Hier.31.15

18 * Voza Rhaman ençun içan da, deithore eta nigar eta auhen handi. Rachel bere haourracgatic nigarrez egon, eta ezta consolatu nahi içan, ceren eztiraden.

19 Baina Herodes hil eta, huná, Iaunaren Aingueruä aguer cequión ametsetan Iosephi Egypten,

20 Cioela, iaiquiric har itzac haourtchoa eta haren ama eta ioan adi Israeleco lurrerát, ecen haourtchoaren arimarẽ ondoan çabiltzanac hil içan dituc.

21 Harc bada iratzarri eta, har citzan haourtchoa eta haren ama, eta ethor cedin Israeleco lurrera.

22 Baina ençunic ecen Archelausec regnatzen çuela Iudean bere aita Herodesen lekuan, beldur cedin hara ioaitera: eta ametsetã diuino-

qui aduertituric retira cedin Galileaco bazterretarát.

23 Eta *hara* ethortiric hábita cedin Nazareth deitzen den hirian: Prophetéz erran içan cena compli ledinçat, ecē Nazareno deithuren cela.

CAP. III.

*1 Ioannesec penitentiá eta Christen ethortea predicatzen. 4 Ioannesen veztidurá eta viandá. 6 Bekatuén confessionea. 7 Ioannesec Phariseuac reprotchatzen, 8 Penitentiazco fructuac. 9 Abrahamen haour. 10 Aizcorá arbore erroan. 11 Vrez eta Spiritu sainduazco Baptismoa. 12 Bahea escuan, lastoa suraco, eta bihia granereraco. 13 Christ batheyatu.*

1 B*Ada dembora hartan ethor cedin Ioãnes baptista, predicatzen çuela Iudeaco desertuan: *Marc. 1. 4. luc. 3. 3.*

2 Eta cioela, Emenda çaitezte: ecen ceruëtaco resumá hurbil da.

3 Ecen haur da Esaias Prophetáz erran içan cena, cioela,* Desertuan oihuz dagoenaren voza *da*, Appain eçaçue Iaunaren bidea, çucen itzaçue haren bidescác. *Esa. 40. 3. marc. 1. 3. luc. 3. 4. ioan. 1. 23.*

4 *Ioannes hunec bada çuen bere abillamendua camellu biloz, eta larruzco guerricoa bere guerruncean inguru: eta haren viandá cen othiz eta bassa eztiz. *Marc. 1. 6.*

5 *Orduan ethor cedin harégana Ierusaleme eta Iudea gucia, eta Iordanaré inguruco comarca gucia. *Marc 1. 5. luc. 3. 7.*

6 Eta batheyatzen ciraden haréganic Iorda-

nean, bere bekatuac confessatzen cituztela.

7 Ikussiric bada anhitz Phariseuetaric eta Sadduceuetaric ethorten ciradela haren baptismora, erran ciecén, *Vipera castá, norc auisatu çaituzte hira ethortecoari ihes daguio çuen?

Berriz.12. 34. eta 23. 33. luc.3.7.

8 Eguin itzaçue bada fructuac emendamenduaren digneac.

9 Eta ezteçaçuela presumi ceuroc baithan erraitera, *Abraham dugu aita: ecen badiotsuet, Iaincoac harri hautariç-ere Abrahami haour suscita ahal dieçaqueola.

Ioan.8. 39. act.13. 27.

10 Bada ia aizcorá arborén errora eçarria da: *beraz arbore fructu onic eguiten eztuen gucia piccatzen da eta sura egoizten.

Berriz.7. 19.

11 *Eguia da, nic batheyatzen çaituztet vrez emendamendutara: baina ene ondoan ethorten dena, ni baino borthitzago da, ceinen çapatén ekarteco ezpainaiz digne: harc batheyaturen çaituzté Spiritu sainduaz eta suz.

Marc 1.8. luc.3.16. ioan.1. 26. act.1.5.

12 *Bere bahea bere escuan du, eta garbituren du bere larraina: eta bilduren du bere oguibihia granerera: baina lastoa choil erreren du behinere hiltzen ezten suan.

Luc. 3. 17.

13 *Orduan ethor cedin Iesus Galileatic Iordanera Ioannesgana, harenganic batheya ledinçát.

Luc.3.21. marc.1. 9.

14 Baina Ioannesec haguitz empatchatzen çuen hura, cioela, Nic behar diat hireganic batheyatu, eta hi ethorten aiz enegana?

15 Eta ihardesten çuela Iesusec erran cieçón, Vtzac oraingotz: ecen hunela complitu behar

diagu iuſtitia gucia. Orduan vtzi ceçã *eguitera.*

16 Eta Ieſus batheyatu cenean, bertan ilki cedin vretic: eta huná, irequi içan çaizcan ceruäc, eta ikus ceçan Iaincoaren Spiritua vſſo columba baten guiſſán iauſten eta haren gainera ethorten.

17 Eta huná vozbat cerutic, cioela, *Haur da ene Seme maitea, ceinetan neure atſeguin ona hartzen baitut.

*2.Tier.1.17. Coloſſ.1.13*

CAP. IIII.

*1 Chriſt deſertuan barur eguin ondoan Satanez tẽtatu. 11 Eta Ainguerüez cerbitzatu. 17 Predicatzen haſſi. 18 Guero Pierris eta Andriu, Iaques eta Ioannes deithuric. 23 Euangelioa du Galilean predicatzen eta eri anhitz ſendatzen.*

1* ORduan Ieſus eramã cedin Spirituaz deſertura, deabruaz tentaledinçát.

*Marc.1.12. luc 4.1.*

2 Eta barurtu cituenean berroguey egun eta berroguey gau, finean goſſe cedin.

3 Eta ethorriric harengana tentaçaleac erran ceçan, Baldin Iaincoaren Semea bahaiz, errac harri hauc ogui eguin ditecen.

4 Baina harc ihardeſten çuela erran ceçan, Scribatua duc, *Ezta guiçona ogui beretic vicico, baina Iainçoaren ahotiç ilkiten den hitz orotaric.

*Deut.8.3.*

5 Orduan hura du eramaiten deabruac Ciuitate ſaindura, eta du eçarten templeco pinacle gainean.

6 Eta diotsó, Baldin Iaincoaren Semea bahaiz, egotzac eure buruä beherera: ecen scribatua duc, *Ecen cargu emanen drauëla hiçaz bere Ainguerueÿ, eta bere escuetan eramanen autela, eure oinaz harrian behazto pa ezadinçát.

*Psal.91.11.*

7 Erran cieçon Iesusec, Berriz scribatua duc, *Eztuc tentaturen eure Iainco Iauna.

*Deut.6.16*

8 Berriz hura du eramaiten deabruac guciz-co mendi gora batetara, eta eracusten drautza munduco resuma guciac eta hetaco gloriá:

9 Eta diotsó, Hauc gucioc emanẽ drauzquiat, baldin ahozpez adora baneçac.

10 Orduan diotsó Iesusec, Habil Satan, ecen scribatua duc: * Eure Iainco Iauna adoraturen duc, eta hura bera cerbitzaturen duc.

*Deut.6.13, 20, eta 10. 20.*

11 Orduan vtziten du hura deabruac: eta huná, Ainguervuäc ethor citecen, eta cerbitzatzen çuten hura.

12 * Eta ençun vkan çuenean Iesusec, ecen Ioannes presonér cela, retira cedin Galileara.

*Marc.1.14 luc.4.14. ioan.4.45.*

13 Eta vtziric Nazareth, ethor cedin eta habita Capernaum itsas aldecoan, Zabulongo eta Nephthalingo bazterretan:

14 Compli ledinçát Esaias Prophetáz erran içan cena, cioela,

15 *Zabulongo lurrá eta Nephtalingo lurrá itsassorraco bide *aldean* Iordanaz berce aldetic, Gentilén Galileá:

*Esa.9.1.*

16 Populu ilhumbean cetzanac argui handi ikussi vkan du; eta herioaren regionean eta itzalean ceunçaney argui altchatu içan çaye,

17 *Orduan-danic has cedin Iesus predicatzen, eta erraiten, Emenda çaitezte: ecen hurbil da ceruëtaco resumá. *Marc.1.15*

18 *Eta Iesusec Galileaco itsas aldean çabilala, ikus citzan bi anaye, Simon, Pierris erraiten dena, eta Andriu haren anayea, egoizten çutela sarea itsassora (ecen pescadore ciraden.) *Marc.1.16*

19 Eta dioste, Çatozte ene ondoan, eta eguinen çaituztet guiça pescadore.

20 Eta hec bertã vtziric sareac iarreiqui içan çaizcan.

21 Eta handic aitzinago iraganic, ikus citzan berceric bi anaye, Iaques Zebedeoren *semea*, eta Ioannes haren anayea, vnci batetan bere aita Zebedeorequin, bere sarén adobatzen ari ciradela: eta dei citzan.

22 Eta hec bertan vncia eta bere aita vtziric iarreiqui içan çaizcan.

23 Eta inguratzen çuen Galilea gucia Iesusec, hayén synagoguetan iracasten ari cela, eta resumaco Euangelioa predicatzen çuela, eta sendatzen çuela eritassun mota gucia, eta langore mota gucia populuaren artean.

24 Orduan io ceçan haren famác Syria gucia: eta presenta cietzoten gaizqui ceuden guciac, eritassun diuersez eta tormentaz eduquiac, eta demoniatuac, eta lunaticoac, eta paralyticoac: eta sendatzen cituen.

25 Eta gendetze handi iarreiqui cequión Galileatic, eta Decapolistic, eta Ierusalemetic, eta Iudeatic, eta Iordanaz berce aldetic.

## CAP. V.

*3 Dohatsuac cein diraden. 13 Apostoluac deitzen lurreco gatz eta munduco argui. 14 Mendi gaineco ciuitatea ecin estal, eta nehorc ez candela vicia gaitzurupean eçarten. 16 Obra onac. 17 Christ certara ethorri. 19 Fidelén eguimbidea. 21 Hilitzecáz, gaitzeriztez, adulterioaz. 29 Escuineco beguiaz eta escuaz. 31 Senhar emaztén separationeaz. 33 Ez iniuriatzeco. 39 Iniuria suffritzeco. 44 Etsayac onhesteco, eta persecutatzaleacgatic othoitz eguiteco. 48 Perfectionea.*

1 IEsus bada ikussiric gendetzeac, igan cedin mendi batetara: eta iarri cenean hurbildu içan çaizcan bere discipuluac.

2 Eta bere ahoa irequiric iracasten cituen, erraiten çuela.

Luc 6.20. 3 *Dohatsu *dirade* spirituz paubreac: ceren hayén baita ceruëtaco resumá.

Luc 21.6. 4 *Dohatsu *dirade* nigarrez daudenac: ceren hec consolaturen baitirade.

Esa.61.2. 5 *Dohatsu *dirade* emeac: ceren hec lurra heretaturen baitute.

Psal.37.11. Psal.24.4. Esa.55.1. 6 *Dohatsu *dirade* iustitiaz gosse eta egarri diradenac: ceren hec asseren baitirade.

7 Dohatsu *dirade* misericordiosoac: ceren hæy misericordia eguinen baitzaye.

Psal.24.4. 8 *Dohatsu *dirade* bihotzez chahu diradenac: ceren hec Iaincoa ikussiren baitute.

9 Dohatsu *dirade* baquea procuratzen dutenac: ceren hec Iainçoaren haour deithurẽ baitirade.

10 * Dohatsu *dirade* iustitiagatic persecutaretzen diradenac: ceren hayén baita ceruëtaco resumá.

1.Pier.3.14 eta 4.14.

11 Dohatsu içanen çarete nehorc iniuria erran drauqueçueneã, eta persecutatu çaituqueztenean, eta hitz gaichto gucia erran duqueitenean çuen contra, gueçurrez ene causaz.

12 Boz eta aleguera çaitezte, ceren çuen saria handi baita ceruëtan: ecen hala persecutatu vkan dituzté çuen aitzineco Prophetác.

13 *Çuec çarete lurreco gatza: eta baldin gatza gueçat badadi, cerçaz gacituren da? ezta guehiagoric deusgay camporat iraizteco eta guiçonéz ohondicatu içateco baicen.

Marc.9.50 luc.14.34.

14 Çuec çarete munduco arguia. Ecin estal daite ciuitate mendi gainean iarria.

15 *Eta eztute iraichequiten candelá eta hura eçarten gaitzurupean, baina candelerean, eta argui eguiten draue etcheco guciey.

Marc.4.21 luc.8.16. eta. 11.33.

16 * Hala argui begui çuen arguiac guiconén aitzinean, çuen obra onac ikus ditzatençat, eta glorifica deçaten çuen Aita ceruëtan dena.

1 Pier.2.12

17 Eztuçuela vste ecen Leguearen edo Prophetén abolitzera ethorri naicela: eznaiz ethorri abolitzera, baina complitzera.

18 *Ecen eguiaz diotsuet, iragan daiteno ceruä eta lurra, iotabat edo punctu hutsbat ezta Leguetic iraganen, gauça guciac eguin diteno.

Luc.16.17.

19 *Norc-ere beraz hautsiré baitu manamendu chipién hautaric bat, eta iracatsiren baititu hunela guiçonac, chipién deithuren da *hura* ce-

Iac.2.10.

ruëtaco resumán: baina norc-ere eguinen baititu eta iracatsiren, hura handi deithuren da ceruëtaco resumán.

20 Ecen erraiten drauçuet, baldin abundosago ezpada çuen iustitiá * Scribena eta Phariseuena baino, çuec etzaretela sarthuren ceruëtaco resumán.

Luc.11.39.

21 Ençun vkan duçue nola erraniçá içã çayẽ lehenagocoey, *Eztuc hilen: eta norc-ere hilen baitu, *hura* iudicioz punitu içateco digne date.

Exo.20.13. deut.5, 17.

22 Baina nic erraiten drauçuet, ecen nor-ere asserretzen baitzayo bere anayeri causa gabe, iudicioz punitu içateco digne datela: eta norcere erranen baitrauca bere anayeri, Raká, *hura* cõseilluz punitu içateco digne datela: eta norcere erranen baitrauca, Erhoá, suzco gehennaz punitu içateco digne datela.

23 Beraz baldin eure oblationea eramaiten baduc aldarera, eta han orhoit bahadi ecen hire anayeac baduela cerbait hire contra,

24 Vtzi eçac han eure oblationea aldare aitzineã, eta habil: lehen appointadi eure anayerequin, eta orduan ethorriric presenta eçac eure oblationea.

25 * Aicén adisquide eure partida cõtrastarequin fitetz, harequin bidean aiceno, ezemón eure partida contrastac iugeari, eta iugeac ezemón sargeantari, eta presoinean eçar ezadin.

Luc 12.58.

26 Eguiaz erraiten drauat, ezaiz ilkiren handic, renda diroano azquen pelata.

27 Ençun vkan duçue ecen lehenagocoéy er-

ran içan çayela, *Eztuc adulterioric iauquiren. *Exo.20.14.*

28 Baina nic erraiten drauçuet, Norc-ere beguiesten baitu emazteric, hura guthicia deçançat, hambatez adulteratu duqueela harequin bere bihotzean.

29 *Bada baldin eure begui escuinac trebuca eraciten bahau, idoqui eçac hura, eta iraitzac eureganic: ecen hobe duc hiretaco, gal dadin hire membroetaric bat, eta eztadin hire gorputz gucia egotz gehennara. *Berriz.18.8. marc 9.47.*

30 Eta baldin eure escu escuinac trebuca eraciten bahau, trenca eçac hura, eta iraitzac eureganic: ecen hobe duc hiretaco, gal dadin hire membroetaric bat, eta eztadin hire gorputz gucia egotz gehennara.

31 Halaber erran içan da, *Norc-ere vtziren baitu bere emaztea, bemó separationeco letrá: *Berriz.19.7. deut. 24.1.*

32 Baina nic diotsuet, ecen norc-ere vtziren baitu bere emaztea, salbu paillardiçaré causaz, adulterio eguin eraciten draucala: eta nor-ere vtziarequin ezconduren baita, harc adulterio iauquiten duela. *marc.10.4 luc 16.18. 1.cor.7.10.*

33 Berriz ençun vkan duçue, ecen lehenagocoey erran içan çayela, *Ezaiz desperiuraturen, baina rendaturen drautzac Iaunari eure iuramendu promettatuac. *Leui.19.12 exod.20.7.*

34 Baina nic diotsuet ezteçaçuen iura batre, ez ceruäz, ecen Iaincoaren thronoa da.

35 Ez eta Lurraz, ecen haren oinetaco alkia da: ez eta Ierusalemez, ecen regue handiaren ciuitatea da.

36 Halaber eure buruäz eztuc iuraturen, ecen bilobat churi ezpa beltz ecin daidic.

Iac.5.12. 37 *Baina biz çuen hitza bay, bay: ez, ez: eta hauçaz goiticoa, gaichtotic da.

38 Ençun vkan duçue, ecen erran içan dela, Exo.21.24 leuit.24.17 deu.19.21. * Beguia beguiagatic, eta hortza hortzagatic.

39 Baina nic erraiten drauçuet, * Eztieçoçuela resisti gaizquiari: baina baldin norbeitec Luc.6.29. rom.12.17 1.Cor.6.7. io baheça eure escuineco mathelán, itzul ieçóc bercea-ere.

40 Eta hiri auci eguin nahi drauanari, eta eure iaccá edequi, vtzi ieçoc mantoa-ere.

41 Eta norc-ere nahi vkanē baihau bortchatu lecoa baten *eguitera*, albeitindoa harequin biga.

Deut.15.8 42 * Escatzen çayanari emóc: eta hireganic maillebatu nahi duena ezteçála iraitz.

43 Ençun vkan duçue ecen erran içan dela, Leui.19.18 *On eritziren draucac eure hurcoari, eta gaitz eritziren draucac eure etsayari.

44 Baina nic erraiten drauçuet, Onhets itzaçue çuen etsayac, benedicaitzaçue maradicatzen çaituztenac, vngui eguieçue gaitz daritzuëney: * eta othoitz eguiçue oldartzen çaizquiçuenacgatic, eta persecutatzen çaituztenacgatic. Luc 23.34. act.7.60. 1.cor.4.13.

45 Çuen Aita ceruëtan denaren haour çaretençat: ecen *harc* ilki eraciten du bere iguzquia gaichtoén eta onén gainera, eta igorten du vria iustoén eta iniustoén gainera.

Luc 6.32. 46 * Ecen baldin çuey on daritzueney on badarizteçue, cer sari vkanen duçue? eztute pu-

blica

blicanoéc-ere hori bera eguiten?

47 Eta baldin çuen anayey ſolament beguitharte eguiten badraueçue, cer guehiago eguiten duçue? eztute publicanoec-ere horrela eguiten?

48 Çareten bada çuec perfect, çuen Aita ceruëtan dena perfect den beçala.

## CAP. VI.

*1 Elemóſynáz. 5 Othoitzáz. 14 Elkarri nolá barkatzeco. 16 Barurāz. 19 Theſaur eguiteaz. 24 Iaincoa eta abraſtaſſunac ecin cerbitza. 25 Vicitze temporalaz arthariç ez vkaiteco. 33 Iaincoaren reſumá eta hartaraco eguimbidea lehenic bilhatzeco.*

1 BEguirauçue çuen elemoſyná eztaguiçuen guiçonén aitzinean heçaz ikus çaiteztēçát: ezpere ſariric eztuçue vkanen çuen Aita ceruëtan dena baithan.

2 *Bada elemoſyna eguiten duanean, ezteçála trompettá io eraci eure aitzinean, hypocritéc eguiten duten beçala ſynagoguetan eta carriquetan, guiçonéz eſtima diteceçát: eguiaz diotſuet recebitzen dutela bere ſaria. *Rom.12.8.*

3 Baina hic elemoſyna eguiten duanean, ezalbeilequi hire ezquerrac, cer eguiten duen hire eſcuinac.

4 Hire elemoſyná ſecretuā dēçat: eta eure Aitā ſecretuā dacuſſanac, rēdaturen drauc aguerrian.

5 Eta othoitz eguiten duanean, ezaicela hy-

pocritác beçala: hæy laket ciayec congregatio-
netan eta carrica cantoinetan çutic daudela o-
thoitz eguitea, guiçonéz ikus ditecēçat: eguiaz
erraiten drauçuet ecen recebitzen dutela bere
ſaria.

6 Baina othoitz eguiten duanean, ſar adi eure
gamberatchoā, eta eure borthá ertſiric, othoitz
eguióc eure Aita ſecretuan denari: eta eure Aita
ſecretuán dacuſſanac rēdaturen drauc aguerrian.

7 Bada othoitz eguiten duçuenean, ezteça-
çuela anhitz edas Paganoéc beçala: ecen vſte
dute bere anhitz edaſteaz ençunen diradela.

8 Etzaretela beraz hetarát irudi: ecen bada-
qui çuen Aitac ceren behar çareten, eſca ça-
quizquioten baino lehen.

*Luc.11.2.*

9 Hunela beraz çuec othoitz eguiçue,* Gu-
re Aita ceruētā aicena, ſanctifica bedi hire icena:

10 Ethor bedi hire reſumá. Eguin bedi hire
vorondatea ceruän beçala lurrean-ere.

11 Gure eguneco oguia iguc egun.

12 Eta quitta ietzaguc gure çorrac, nola guc-
ere gure çorduney quittatzen baitrauegu.

*Berriz. 13. 19.*

13 Eta ezgaitzála ſar eraci tentationetan, bai-
na deliura gaitzac * gaichtotic. Ecen hirea duc
reſumá, eta puiſſancá, eta gloriá ſeculacotz.
Amen.

*Marc.11. 25.*

14 *Ecen baldin barka badietzeçue guiço-
ney bere faltác, barkaturen drauçue çuey-ere
çuen Aita cerucoac.

15 Baina baldin barka ezpadietzeçue guiço-
ney bere faltác, çuen Aitac-ere eztrauzquiçue

barkaturen çuen faltác.

16 Guehiago, barur daguiçuenean, etzaretela itchura triſtetaco hypocritác beçala: ecen deſguiſatzen dituzté bere beguitharteac, barur diradela guiçoney agueri diradençat: eguiaz erraiten drauçuet, ecen recebitzen dutela bere ſaria.

17 Baina hic barur eguiten duanean vncta eçac eure buruä, eta ikuz eçac eure beguithartea:

18 Güiçoney barur aicela agueri ezaquiençát, baina eure Aita ſecretuan denari: eta eure Aita ſecretuan dacuſſanac rendaturen drauc aguerrian.

19 Eztitzaçuela eguin çuen theſaurac lurrean, non cerrenac eta herdoillác goaſtatzen baititu, eta non ohoinéc çulhatzen eta ebaiſten baitituzté.

20 *Baina eguin itzaçue çuen theſaurac ceruän, nõ ez cerrenec ez herdoillac ezpaitu goaſtatzen, eta non ohoinéc ezpaitute çulhatzen ez ebaiſten.

*Luc.12.33. 1.tim.6.19.*

21 Ecen non baita çuen theſaura, han içanen da çuen bihotza-ere.

22 *Gorputzaré arguia da beguia, beraz baldin hire beguia ſimple bada, hire gorputz gucia argui datec:

*Luc.11.34.*

23 Baina baldin hire beguia gaichto bada hire gorputz gucia ilhun datec: beraz baldin hitañ den arguia ilhumbe bada, ilhumbe hura cein handi *da:e?*

24 *Nehorc bi nabuſſi ecin cerbitza ditza-

*Luc 16. 13.*

que:ecen edo batari gaitz eritziren drauca, eta berceari on: edo batarequin eduquiren du eta bercea menosprecia turen. Ecin cerbitza ditzaqueçue Iainçoa eta abrastassunac.

Luc.12.22. 1.pier.5.7. psal.55.23. philip.4.6. 1.tim.6.8.

25 *Halacotz erraiten drauçuet, eztuçuen artharic çuen vicitzeaz, cer ianen duçuen eta cer edanen: ezeta çuen gorputzaz, cerçaz veztituren çareten: ezta vicia viandá baino guehiago, eta abillamendua baino gorputza?

26 Consideraitzaçue ceruco choriac, ecen eztute ereiten, ez errequeitatzen, ezeta graneretara biltzen, eta çuen Aita cerucoac hatzen ditu hec: etzarete çuec anhitzez hec baino excellentago?

27 Eta norc çuetaric artha vkanez eratchequi, ahal dieçaqueo bessobat bere hãditassunari?

28 Eta veztiduráz cergatic çarete arthatsu? ikas eçaçue nola landaco floreac handitzen diraden: ez nekatzen dirade, ez iruten duté.

29 Baina erraiten drauçuet are Salomon-ere bere gloria guciarequin eztela veztitu içan hetaric bat beçala.

30 Bada baldin landaco egun belhar dena, eta bihar labean eçarten dena, Iaincoac hala inguru veztitzen badu: eza çuec anhitzez areago, fede chipitacoac?

31 Eztuçuela beraz artharic erraiten duçuela, Cer ianen dugu, edo cer edanen dugu, edo cerçaz veztituren gara?

32 (Ecen gauça hauc guciac Paganoéc bilhatzen dituzté) ecen badaqui çuen Aita ceru-

coac, ecen gauça hauen gución beharra baduçuela.

33 Baina bilha eçaçue lehenic Iaincoaren resumá eta haren iustitiá, eta gauça hauc guciac emanen çaizquiçue gaineraco.

34 Etzaretela bada arthatsu biharamunaz: ecen biharamunac beretaco artha vkanen du: egunac asco du bere afflictioneaz.

## CAP. VII.

*1 Ez iudicatzeco. 6 Gauça saindua orey ez emaiteco. 7 Escatzeco, bilhatzeco, bulkatzeco. 12 Scripturaren sommarioa. 13 Bortha herssia eta çabala. 15 Propheta falsuac. 16 Arborearen fructua. 21. Aita cerucoaren vorondatea eguinen duena saluaturen. 22 Miraculu falsu eguilez. 24 Hartoca edo sable gaineco etcheaz.*

1* EZteçaçuela iudica, iudica etzaiteztençát. *Luc.6.37. rom.2.1. 1.cor.4.3.*

2 Ecen cer iugemenduz iudicaturen baituçue, iudicaturen çarete: * eta cer neurriz neurthuren baituçue, aldiz neurthuren çaiçue. *Marc.4.24 luc.6.38.*

3 Eta cergatic behatzen duc eure anayeren beguico fitsera, eta eure beguico gapirioari ezatzayo ohartzen?

4 *Edo, nola diotsóc eure anayeri, Vz tac idoqui deçadan fitsa hire beguitic, eta horrá, gapirioa hire beguian? *Luc.6.41.*

5 Hypocritá, idocac lehenic gapirioa eure beguitic, eta orduan behaturen duc, idoqui de-

çán fitſa eure anayeren beguitic.

6 Ezteyeçuela gauça ſaindua orey, eta eztitzaçuela egotz, çuen perlác vrdén aitzinera: bere oinéz ohondica eztitzaten, eta itzuliric çathica etzaitzaten çuec.

Berriz.21.22. mar.11.24 luc.11.9. ioan.14.13 eta 16.14. iac.1.6.

7 *Eſca çaitezte eta emanen çaiçue: bilha eçaçue, eta eridenen duçue: bulka eçaçue, eta irequiren çaiçue.

8 Ecen eſcatzen den guciac, recebitzen du: eta bilhatzen duenac, erideiten du: eta bulkatzen duenari, irequiren çayó.

9 Ecẽ nor da çuetaric guiçona, baldin bere ſemea ogui eſca badaquió, harri emanẽ draucana?

10 Eta, baldin arrain eſca badaquió, ala ſuguebat emanen drauca?

11 Beraz çuec gaichto çaretelaric baldin badaquiçue gauça onén çuen haourrey emaiten: cembatez areago çuen Aita ceruëtan denac emanen drauzte gauça onac eſcatzen çaizquioney?

Luc.6.31. iob.4.16.

12 *Bada guiçonéc çuey eguin dietzaçuen nahi dituçuen gauça guciac, eguin ietzeçue çuecere hæy halaber: ecen haur da Leguea eta Prophetác.

Luc.13.24.

13 *Sar çaitezte bortha herſſitic: ecen bortha largoa eta bide çabala da perditionetara irioiten duena, eta anhitz dirade hartaric ſartzen diradenac.

14 Ecen bortha herſſia da eta bide herſſia vicitzera eramaiten duena: eta guti dirade hura erideiten dutenac.

15 Beguirauçue bada propheta falsuetaric, cein ethorten baitirade çuetara ardi abiturequin: baina barnean otso harrapari dirade.

16 Bere fructuetaric eçaguturen dituçue hec. *Ala biltzen duté elhorrietaric mahatsic, edo karduetaric ficoric? Luc. 6. 44.

17 Hala arbore on guciac fructu onac eguiten ditu, eta arbore gaichtoac fructu gaichtoac eguiten ditu.

18 Arbore onac fructu gaichtoric ecin daidi, eta arbore gaichtoac fructu onic ecin daidi.

19 *Fructu onic eguiten eztuen arbore gucia piccatzen da eta sura egoizten. Lehē 3. 10

20 Bere fructuetaric beraz eçaguturen dituçue hec.

21 *Niri Iauna, Iauna, erraiten drautan gucia ezta sarthuren ceruëtaco resumán, baina ene Aita ceruëtan denaren vorondatea eguiten duena. Rom. 2. 13. iac. 1. 22.

22 Anhitzec erranen draut egun hartan, Iauna, Iauna, eztugu hire icenean prophetizatu, eta eztitugu hire icenean deabruac egotzi campora, eta eztugu hire icenean verthute anhitz eguin?

23 Eta orduan erranen drauet claroqui, *Egundano etzaituztet eçagutu: parti çaitezte eneganic iniquitate eguiten duçuenóc. Luc 13. 26, 27. psal. 6. 9.

24 *Norc-ere bada ençuten baititu ene hitz hauc, eta hec eguiten, hura dut comparaturen guiçon çuhur bere etchea arroca gain batetan edificatu duenarequin: Luc 6. 47.

25 Eta erori içan da vria, eta ethorri içan dirade vr sobernác, eta eraunsi vkan duté haicéc, eta io vkan duté etchearen contra: eta ezta erori içan: ecen arroca gainean fundatua cen.

26 Eta norc-ere ençuten baititu ene hitz hauc, eta ezpaititu eguiten, comparaturen da guiçon erho bere etchea sable gainean edificatu duenarequin.

27 Eta erori içan da vria, eta ethorri içan dirade vr sobernác, eta haicéc eraunsi vkan duté, eta io vkan duté etche haren contra, eta erori içan da, eta haren deseguitea handi içan da.

Marc.1.22 luc.4.32.

28 * Eta guerta cedin propos hauc acabatu cituenean Iesusec, populua miraz baitzegoen haren doctrináz.

29 Ecen iracasten cituen authoritate çuenac beçala, eta ez Scribéc beçala.

## CAP. VIII.

*2 Sorhayoa. 5 Centeneraren muthil eria eta sedea. 11 Gentilén vocationea eta Iuduén iraiztea. 13 Sinhestea. 14 Pierrisen ama guinharrebá, bayeta anhitz demoniatu eta eri sendatu. 19 Christi iarreiquiteco vorondate çuen Scribá. 21 Bere aita ohortze beharrez congit esquez cegoen discipulua. 24 Itsassoco tempestatea Christec cessa eraciten. 28 Eta bi demoniatu sendaturic, deabruey vrdetara ioaitera congit emaiten.*

1 ETa menditic iautsi cenean gendetze handi iarreiqui cequión.

Marc 1.40 luc 5.12.

2 *Eta huná, sorhayo batec ethorriric adora ceçan hura, cioela,

Iauna, baldin nahi baduc, chahu ahal niroc.

3 Eta escua hedaturic hunqui ceçan hura Iesusec, cioela, Nahi diat, aicén chahu. Eta bertan chahu cedin haren sorhayo tassuna.

4 Orduan diotsó Iesusec, Beguirauc nehori ez-terroán: baina habil, eta eracuts ieçoc eure burua Sacrificadoreari, eta presenta eçac *Moysesec ordenatu duen oblationea, hæy testimoniagetan *dençát*.

Leuit. 14. 3

5 * Eta sarthu cenean Iesus Capernaumen, e-thor cedin harengana Centenerbat othoitz eguiten ceraucala,

Luc 7. 2.

6 Eta cioela, Iauna, ene muthilla diatzac et-chean paralytico, gaizqui tormentatua.

7 Eta diotsó Iesusec, Nic ethorriric sendaturen diat hura.

8 Eta ihardesten çuela Centenerac erran ce-çan, Iauna, eznauc digne ene atharbean sar a-din: baina errac solament hitza, eta sendaturen baita ene muthilla.

9 Ecen ni-ere guiçon nauc *berceren* meneco, ditudalaric neure azpico gendarmesac, eta er-raiten diarocat huni, Oha, eta ioaiten duc: eta berceari, Athor, eta ethorten duc: eta neure cer-bitzariari, Eguic haur, eta eguiten dic.

10 Eta *haur* ençunic Iesusec mirets ceçan: eta dioste çarreizconey, Eguiaz erraiten drauçuet, eztudala Israelen-ere hain fede handiric eriden.

11 Baina badiotsuet ecen anhitz Oriétetic eta Occidentetic ethorriren diradela, eta iarriren di-radela Abrahamequin Isaac-equin eta Iacob-e-

quin ceruëtaco resumán:

12 Eta resumaco semeac egotziren diradela campoco ilhumbera: *haniçanen da nigar eta hortz garrascots.

*Berriz 22. 13.

13 Eta erran cieçón Iesusec Centenerari, Ohá eta sinhetsi duán beçala eguin bequic. Eta senda cedin haren muthilla ordu hartan berean.

*Marc 1.29 luc 4.38.*

14 *Eta Iesusec Pierrisen etchera ethorriric, ikus ceçan haren ama-guinharreba ohean cetzala, eta helgaitzac çaducala.

15 Eta hunqui ceçan haren escua, eta vtzi ceçan helgaitzac, eta iaiqui cedin, eta cerbitza citzan.

*Marc 1.32 luc 4.40.*

16 *Eta arratsa ethorri cenean, presenta cieçoten anhitz demoniatu: eta egotz cietzen campora spirituac hitzaz, eta gaizqui ceuden guciac senda citzan:

*Esa.53.4. 1.pier.2.24*

17 Compli ledinçát Esaias prophetáz erran içan cena, cioela, *Harc gure langoreac hartu vkan ditu, eta gure eritassunac ekarri vkan ditu.

*Luc 9.57.*

18 *Eta ikussiric Iesusec gendetze handi bere inguruän, mana citzan *discipuluac* ioan litecen berce aldera.

19 Eta hurbilduric Scriba batec erran cieçon, Magistruá, iarreiquiren natzaic hiri, norat-ere ioanen baitaiz.

20 Eta diotsó Iesusec, Aceriec çulhoac citié eta ceruco choriéc ohatzeac, baina guiçonaren Semeac eztic non bere buruä reposa deçan.

21 Guero bere discipuluetaric, berce batec er-

ran cieçon, Iauna, permetti ieçadac behin ioannadin neure aitaren ohorztera.

22 Eta Iesusec erran cieçon, Arreit niri, eta vzquic hilac bere hilén ohorztera.

23 *Eta vncian sarthu cenean iarreiqui içan çaizcan bere discipuluac.

*Marc 4.35 luc 8.22.*

24 Eta huná, tormenta handibat altcha cedin itsassoan, hambat non vncia bagaz estalzen baitzen: baina hura lo cetzan.

25 Eta hurbilduric bere discipuluéc iratzar ceçaten, ciotela, Iauna, beguira gaitzac, galdu guihoaçac.

26 Eta dioste, Cergatic çarete ici fede chipitacoac? Orduan iaiquiric mehatcha citzā haiceac eta itsassoa: eta sossagu handia eguin cedin.

27 Orduan gendéc mirets ceçaten, ciotela, Ceric da haur, non haicec-ere eta itsassoac obeditzen baitute?

28 *Eta iragan cenean berce aldera, Gergesenén regionera, aitzinera ethorri içan çaizcan bi demoniatu thumbetaric ilkiric, gucizco terribleac, hambat nō nehor ecin iragan baitzaiten bide hartaric.

*Marc 5.1. luc 8.26.*

29 Eta huná, heyagora eguin ceçaten, cioitela, Cer da gure eta hire artean, Iesus Iaincoaren Semea? ethorri aiz huna ordu baino lehen gure tormentatzera?

30 Eta cen hetaric vrrun vrdalde handibat alha cenic:

31 Eta deabruäc othoiztez çaizcan, cioitela, Baldin campora egoizten bagaituc, permetti

ieçaguc vrdalde hartara ioaitera.

32 Eta dioste, Çoazte. Hec bada ilkiric ioan citecen vrdaldera: eta huná, vrdalde hura gucia oldar cedin garaitic behera itsassora, eta hil citecen vretan.

33 Orduan vrdainéc ihes eguin ceçaten: eta ethorriric hirira, conta citzaten gauça guciac, eta cer demoniatuey heldu içan çayen.

34 Eta huná, hiri gucia ilki cequión Iesusi aitzinera: eta ikussi çutenean hura, othoitz eguin cieçoten retira ledin hayen comarquetaric.

## CAP. IX.

*2 Iesusec paralyticoa sendatzen. 9 Mattheu deitzen. 12 Phariseuey ihardesten. 14 Bayeta Ioannesen discipuluey. 22 Odola çarión emaztea sendatzen. 27 Itsu bi arguitzen. 32 Demoniatu mutua sendatzen. 35 Hor emen ari predicatzen eta sendatzen. 38 Guero du Euangelioaren auãçamendutan othoitz eguitera exhortatzen.*

1 ORduan sarthuric vncira iragan cedin berce aldera, eta ethor cedin bere hirira.

*Marc 2.1. luc 5.18.*

2 *Eta huná, presenta cieçoten paralyticobat ohean cetzanic: eta ikussiric Iesusec hayén fedea, erran cieçón paralyticoari, Auc bihotz on, semé, barkatu çaizquic eure bekatuac.

3 Eta huná, Scribetaric batzuc erraiten çuten bere baithan, Hunec blasphematzen du.

4 Eta ikussiric Iesusec hayén pensamenduac,

erran ceçan, Cergatic gaichtoqui pensatzen duçue çuen bihotzetan?

5 Ecen cein da erratchago, erraitea, Barkatu çaizquic eure bekatuac: ala erraitea, Iaiqui adi eta ebil adi?

6 Daquiçuençat bada ecen guiçonaren Semeac baduela authoritate lurrean bekatuén barkatzeco (orduan diotsó paralyticoari) Iaiqui adi, har eçac eure ohea, eta habil eure etcherát.

7 Orduan iaiquiric ioan cedin bere etcherát.

8 Eta gendetzéc *hori* ikussiric mirets ceçaten, eta glorifica ceçaten Iaincoa, ceinec emá vkan baitraue halaco authoritatea guiçoney.

9 *Eta handic iragaiten cela Iesusec ikus ceçan guiçonbat peage lekuan iarria Mattheu deitzen cenic, eta diotsó, Arreit niri. Eta iaiquiric iarreiqui cequión:

*Marc 2.14 luc 5.27.*

10 Eta guertha cedin Iesus *haren* etchean mahainean iarriric cegoela, huná, anhitz publicano eta vicitze gaichtotacoric ethorriric, iar baitzitecen mahainean Iesusequin eta haren discipuluequin.

11 Eta *hori* ikussiric Phariseuéc erran ciecén haren discipuluey, Cergatic publicanoequin eta vicitze gaichtotacoequin iaten du çuen magistruac?

12 Orduan Iesusec *hori* ençunic erran ciecén, Osso diradenéc eztute medicuren beharric, baina eri diradenéc.

13 Baina çoazte, eta ikas eçaçue cer den, *Misericordia nahi dut eta ez sacrificio. Ecē eznaiz

*Ose.6.6. Berr.12.7.*

1.Tim.1. 15. ethorri iuſtoén deitzera, * baina bekatorén, emendamendutara.

Marc 2.18 luc 5.33. 14 * Orduan ethor citecen harengana Ioanneſen diſcipuluac, cioitela, Cergatic guc eta Phariſeuéc barur eguiten dugu maiz, eta hire diſcipuluéc ezpaitute baruric eguiten?

15 Eta erran ciecen Ieſuſec, Ezcõduaren gamberaco gendéc doluric ekar ahal dirote, ezcondua hequin deno? Baina ethorriren dirade egunac edequiren baitzaye ezcondua eta orduan barur eguinen baituqueite.

16 Halaber nehorc eztrauca eratchequitẽ oihal pedaçu latzbat abillamendu çar bati: ecen compligarri eratchequiac edequiten du abillamendutic, eta gaizquitzenago da ethendurá.

17 Eta eztute eçarten mahatſarno berria çahagui çarretan: ezpere lehertzen dirade çahaguiac, eta mahatſarnoa iſſurten, eta çahaguiac galtzen: baina mahatſarno berria çahagui berrietan eçarten duté, eta biac beguiratzẽ dirade.

Marc 5.22 luc 8.41. 18 *Gauça hauc hæy erraiten cerauztela, huná, iaun batec ethorriric adora ceçan hura, cioela, Ene alaba orain hil içan duc: baina ethorriric eçarrac eure eſcua harẽ gainean, eta vicico baita.

19 Eta iaiquiric Ieſus iarreiqui cequión, eta haren diſcipuluac.

20 (Eta huná, hamabi vrthez odol iariatzez eri cen emazte batec guibeletic ethorriric hunqui ceçan haren abillamendu ezpaina.

21 Ecen erraiten çuen bere baithan, Baldin ſolament hunqui badeçat haren abillamendua,

ſendaturen naiz.

22 Orduan Ieſuſec itzuliric eta hura ikuſſiric erran ceçan, Aun bihotz on, alabá, eure fedeac ſaluatu au. Eta ſenda cedin emaztea ordu bereã)

23 Eta Ieſuſec ethorriric iaun haren etchera eta ikuſſiric ſoinulariac, eta gendetzea tumultu ari cela,

24 Dioſte, Retira çaitezte, ecen ezta hil neſcatchá: baina lo datza. Eta truffatzen ciraden harçaz.

25 Eta idoqui içan cenean gendetzea, ſarthuric, har ceçan haren eſcua: eta iaiqui cedin neſcatchá.

26 Eta laſter ceguian fama hunec lur hartan gucian.

27 Eta Ieſus handic iragaiten cela, iarreiqui içan çaizcan bi itſu oihuz ceudela, eta cioitela, Auc pietate guçaz Dauid-en ſemeá.

28 Eta ethorri cenean etchera, ethor citecen harengana itſuoc, eta dioſte Ieſuſec, Sinheſten duçue hori ahal daididala? Diotſote, bay Iauna.

29 Orduan hunqui citzan hayén beguiac, cioela, Çuen fedearen araura eguin bequiçue.

30 Eta irequi citecen hayén beguiac, eta debeta citzan mehatchurequin Ieſuſec, cioela, Beguirauçue nehorc eztaquian.

31 Baina hec ilkiric barreya ceçaten haren famá herri hartan gucian.

32 *Eta hec ilkiten ciradela, huná, preſenta cieçoten guiçon mutu demoniatubat.

*Berr.12.22 luc 11.14.*

33 Eta deabrua campora egotzi içan cenean,

minça cedin mutua: eta mirets ceçaten gendetzéc, cioitela, Egundano ezta aguertu hunelaco gauçaric Israelen.

Berriz 12.24. marc 3.22. luc 11.15. 34 *Baina Phariseuéc erraiten çuten, Deabruén princearen partez campora egoizten ditu deabruac.

Marc 6.6. luc 13.22. lehen 4.23. 35 *Eta inguratzen cituen Iesusec hiri eta burgu guciac, iracasten ari cela hayén synagoguetan, eta predicatzẽ çuela resumaco Euangelioa eta sendatzen çuela eritassun mota gucia eta lãgore mota gucia populuan.

Marc 6.34 36 *Eta ikussiric *Iesusec* gendetzeac, compassione har ceçan heçaz, ceren baitziraden errebelatuac eta barreyatuac ardi artzainic eztutenac beçala.

Luc 10.2. ioan. 4.35. 37 Orduan dioste bere discipuluey,* Segur vztá handi da, baina languile guti.

38 Othoitz eguioçue bada vzta Iabeari, irion ditzan languileac bere vztara.

## CAP. X.

*1 Sendatzeco dohainac. 2 Apostoluén contua eta icenac. 7 Hec igorri predicatzera. 11 Baquea hayen recebitzalén. 16 Çuhur eta simple içateco. 17, 21 Persecutionéz. 20 Spiritu saindua Apostoluetan minço. 27 Ilhumbean eta beharrira errana. 28 Noren nehor beldur içateco den. 29 Bi parra-chori. 30 Gure biloac contatuac. 32 Christen aboatzeaz, edo vkatzeaz. 34 Baqueaz, ezpatáz. 35 Dissensionéz. 37 Ahaidey baino Christi hobe eritziteco. 38 Norc bere crutzea hartzeco eta Christi iarreiquiteco. 39 Viciaren galtzea edo beguiratzea. 40 Prophetén recebitzea.*

1 Or-

1 *ORduan bere hamabi diſcipuluac beregana deithuric, eman ciecen bothere ſpiritu ſatſuén cõtra, hayén campora egoizteco, eta eritaſſun mota guciaren eta langore mota guciaren ſendatzeco.

*Marc.3.13 luc 9.1.*

2 Bada hamabi Apoſtoluén icenac dirade hauc: lehena, Simon erraiten dena Pierris, eta Andriu haren anayea: Iacques Zebedeoren ſemea, eta Ioannes haren anayea.

3 Philippe eta Bartholomeo: Thomas eta Mattheu publicanoa: Iacques Alpheoren *ſemea* eta Lebeo, icen goiticoz Thaddeo.

4 Simon Cananeoa, eta Iudas Iſcariot, hura traditu-ere çuena.

5 Hamabi hauc igor citzan Ieſuſec, eta eman ciecén manamẽdu, cioela, Gentiletarát etzoaztela, eta Samaritanoén hiritan etzaiteztela ſar:

6 Bainaitzitic çoazte *Iſraeleco etcheco ardi galduetara.

*Act.13.46*

7 Bada partitu eta, predica eçaçue, erraiten duçuela, *Ceruëtaco reſumá hurbil da.

*Luc.9.2.*

8 Eriac ſenda itzaçue, ſorhayoac chahu itzaçue, hilac reſuſcita itzaçue, deabruac campora egotz itzaçue: dohainic recebitu duçue, eta dohainic emaçue.

9 *Eztaguiçuela prouiſioneric vrrhez, ez cilharrez, ez cobrez çuen guerricoetan:

*Marc. 6.8. luc 9.3.*

10 Ezeta maletaz bidecotzát, ez birá arropaz, ez çapataz, ez vhez, *ecen languilea bere viciaren digne da.

*Luc 10.7. 1.tim.5.18*

Luc 10.10. 11 *Eta cein-ere hiritan edo burgutan ſarthuren baitzarete, informa çaitezte nor dẽ hartan digneric, eta çaudete han parti çaitezteno.

12 Eta cembeit etchetan ſarthuren çaretenean, ſaluta eçaçue hura.

13 Eta baldin etchea digne bada, ethor bedi çuen baquea haren gainera: baina baldin digne ezpada, çuen baquea çuetara itzul bedi.

Marc 6.11 luc 9.5. act.13.51, eta 18.6. 14 *Eta norc-ere recebituren ezpaitzaituzte, eta ez çuen hitzey behaturen, etche edo hiri hartaric ilkitean iharros albeitzineçate çuen oinetaco errhautſa.

15 Eguiaz erraiten drauçuet, èmequiago tractaturen diradela Sodomaco eta Gomorrhaco lurrecoac iudicioco egunean, ecen ez hiri hura.

Luc 10.3. 16 *Huná, nic igorten çaituztet çuec, ardiac otſoén artera beçala: çaretẽ bada çuhur ſugueac beçala, eta ſimple vſſo columbác beçala.

17 Eta beguira çaitezte guiçonetaric: ecen liuraturen çaituzte conſiſtorioetara, eta bere ſynagoguetan açotaturen çaituzte.

18 Eta gobernadoretara eta reguetara eramanen çarete ene cauſaz, hec eta Gentilé c teſtimoniage *haur dutençat*.

Marc 13.11. luc 12.11. 19 *Baina liura çaiteztenean, eztuçuela arthâric nola edo cer minçaturen çareten: ecen ordu hartan berean emanen çaiçue cer minça çaitezqueten.

20 Ecen etzarete çuec minço çaretenac, baina çuen Aitaren Spiritu çuetan minço dena.

Luc 21.16. 21 *Eta liuraturen du anayeac anayea heriota-

ta, eta aitác haourra: eta altchaturẽ dirade haourrac aita-amén contra, eta hil eraciren dituzté.

22 Eta guciéz gaitzetsiac içanen çarete, ene icenagatic: *baina norc-ere perseueraturẽ baitu finerano hura saluaturen da. Ber. 24.13

23 Eta persecutaturen çaituztenean hiri hartan, ihes eguiçue berce batetara: ecen eguiaz erraiten drauçuet, eztituçue inguraturen Israeleco hiri guciac, non ethor eztadin guiçonaren Semea.

24 *Ezta discipulua magistruaren gaineco, ezeta cerbitzaria bere iaunaren gaineco. Luc 6.40. ioan 13.16, eta 15.20.

25 Asco du disciplulac bere magistrua beçala den: eta cerbitzariac, bere iauna beçala: *baldin Aitafamiliá bera Beelzebub deithu badute, cẽbatez guehiago haren domesticoac? Ber. 12.24.

26 Etzaretela beraz hayén beldur: * ecen ezta deus estaliric aguerturen eztenic, ezeta deus secreturic iaquinen eztenic. Marc 4.22 luc 8.17, eta 12.2.

27 Ilhumbean erraiten drauçuedana, erraçue arguian: eta beharrira ençuten duçuena, predica eçaçue etche gainetan.

28 Eta etzaretela beldur gorputza hiltzen duténén, eta arimá ecin hil deçaquetenen: bainaitzitic çareten beldur arimá eta gorputza gehennán gal ahal ditzaquenaren.

29 Bi parra-chori eztirade dirutcho batetan saltzẽ? eta hetaric bat ezta lurrera erorirẽ, çuen Aita gabe.

30 * Etare çuen buruco bilo guciac contatuac dirade. 1. Sam. 14. 45.

31 Etzaretela beraz beldur: parra-choriéc baino çuec guehiago valio duçue.

*Marc 8.38 luc 9.26, eta 12. 8. 2.tim.2.12*

32 *Bada norc-ere aboaturen bainau guiçonén aitzinean, aboaturen dut nic-ere hura ene Aita ceruëtan denaren aitzinean.

33 Baina norc-ere vkaturen bainau guiçonén aitzinean, vkaturen dut nic-ere hura ene Aita ceruëtan denaren aitzinean.

*Luc 12.51.*

34 *Eztuçuela vste ecen baquearen eçartera, ethorri naicela lurrera: eznaiz ethorri baquearen eçartera, baina ezpataren.

*Mich.7.6.*

35 *Ecen ethorri naiz guiçonaren bere aitaren contra gudutan eçartera, eta alabáren bere amaren contra, eta errenaren bere ama-guinharrebaren contra.

36 Eta guiçonaren etsay beraren domesticoac *içanen dirade.*

*Luc 14.26*

37 *Aita edo ama ni baino maiteago duena, ezta ene digne: eta semea edo alabá ni baino maiteago duena, ezta ene digne.

*Ber.16.24. marc 8.34. luc 9. 23, eta 14. 27. Ber.10. 25 marc 8.35. luc 9.24, eta 17.33. ioan 12.25*

38 *Eta bere crutzea hartzen eztuena, eta niri ondotic eztarreitana, ezta ene digne.

39 *Bere vicia beguiraturen duenac, galduren du hura: eta bere vicia galduren duenac ene causaz, beguiraturen du hura.

*Luc 10.16. ioan 13.20*

40 *Çuec recebitzen çaituztenac, ni recebitzen nau: eta ni recebitzen nauenac, ni igorri nauena recebitzen du.

41 Prophetaren icenean Prophetabat recebitzen duenac, Prophetaren saria recebituren du: eta iustoaren icenean iustobat recebitzen

duenac, iuſtoren ſaria recebituren du.

42 *Eta norc-ere edatera emanen baitrauca beirebat vr hotz huts chipi hautaric bati diſcipuluren icenean: eguiaz diotſuet, eztuela bere ſaria galduren. *Marc 9.41*

CAP. XI.

2 *Ioannes Baptiſtac Chriſtgana igorten.* 3 *Haren mandatalgoa.* 13 *Leguea eta Prophetác.* 14 *Elias.* 16 *Merkatuan iarriric dauden haourrac.* 18 *Chriſtezco eta Ioanneſezco reputationea.* 20 *Chorazini, Bethſaidari, eta Capernaumi eguitē çayen reprotchua eta mehatchua.* 24 *Sodoma.* 25 *Chipiey Euangelioa declaratu.* 28 *Nekatuac eta cargatuac Chriſtec beregana deitzen.* 29 *Haren vztarria.*

1 GVero guertha cedin Ieſuſec bere hamabi diſcipuluey manamendu emaitea acabatu çuenean, parti baitzedin handic iracats eta predica leçāçat hayén hirietan.

2 *Eta Ioāneſec preſoindeguian ençunic Chriſten obrác, igorriric bere diſcipuluetaric biga, *Luc 7.18.*

3 Erran cieçon, Hi aiz ethorteco cen hura, ala berce baten beguira gaude?

4 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén, Çoazte eta conta ietzoçue Ioanneſi, ençuten eta ikuſten dituçuen gauçác:

5 Itſuéc ikuſtea recrubatzē duté, eta mainguäc badabiltza, ſorhayoac chahutzen dirade, eta gorréc ençuten duté, hilac reſuſcitatzen dirade, eta Euangelioa paubrey denuntiatzen çaye.

6 Eta dohatſu da ſcandalizaturen eztena nitan,
7 Eta hec ioaiten ciraden beçala, has cedin Ieſus erraiten populuari Ioanneſez, Ceren ikuſtera ilki içan çarete deſertura? haiceaz erabilten den canabera baten?
8 Baina ceren ikuſtera ilki içan çarete? guiçon abillamendu precioſoz veztitu baten? huná, abillamendu precioſoac ekarten dituztenac, reguén etchetan dirade.
9 Baina cerẽ ikuſtera ilki içan çarete? Propheta batẽ? bay diotſuet eta Propheta bainoagoaren.

*Mal.3.1.*

10 Ecen haur da ceinez ſcribatua baita, *Huná, nic igorten diat neure mandataria hire beguitharte aitzinean, ceinec hire bidea appainduren baitu hire aitzinean.
11 Eguiaz erraiten drauçuet, ezta ilki emaztetaric íayo diradenén artean nehor, Ioannes Baptiſta baino handiagoric: guciagatic-ere ceruëtaco reſumaco chipiena hura baino hãdiago da.

*Luc 16.16.*

12 *Eta Ioannes Baptiſtaren eguneraric oraindrano, ceruëtaco reſumari bortcha eguitẽ çayo, eta keichuéc harrapatzen dute hura.
13 Ecen Propheta guciéc eta Legueac Ioanneſganano prophetizatu vkan duté.

*Mala.4.5.*

14 Eta, baldin nahi baduçue recebitu, *haur da Elias ethorteco cena.
15 Ençuteco beharriric duenac, ençun beça.

*Luc 7.31.*

16 *Baina norequin cõparaturẽ dut generatione haur? Merkatuã iarriric daudẽ, eta bere laguney oihuz dagozten haourtchoac beçalaco da,
17 Ceinéc baitioite, Chirula ſoinu eguin drau-

çuegu,eta etzarete dançatu:ereſſiz cãtatu drauçuegu,eta eztuçue deithoreric eguin.

18 Ecen ethorri da Ioãnes iaten ez edaten eztuela,eta erraiten duté,Deabrua du.

19 Ethorri da guiçonaren Semea iaten eta edaten duela,eta dioite,Horra, guiçon gormanta eta hordia, publicanoén eta vicitze gaichtotacoén adiſquidea. Baina iuſtificatu içan da ſapientiá bere haourréz.

20 *Orduan has cequién *hunela* reprochatzen haren verthuteric anhitz eguin içan cen hiriey, ceren emendatu etziraden: Luc 10.13.

21 Malediɛtione hiri Corazin, malediɛtione hiri Bethſaida: ecen baldin Tyren eta Sidonen eguin içan balirade çuec baithan eguin içan diraden verthuteac, aſpaldi çacurequin eta hautſequin emendatu ciratequeen.

22 Etare diotſuet, Tyr eta Sidon iudicioco egunean çuec baino emequiago traɛtatuac içanen diradela.

23 Eta hi Capernaũ cerurano altchatu içan aicena iffernurano beheraturẽ aiz: ecẽ baldin Sodomã eguin içã balirade hi baithã eguin içã diradẽ verthuteac, egũgo egunerano egõ çateán.

24 Etare badiotſuet,ecen Sodomacoac hi baino emequiago traɛtatuac içanen diradela iudicioco egunean.

25 * Dembora hartan ihardeſten çuela Ieſuſec erran ceçan, Aitá, ceruco eta lurreco Iauná, eſquerrac rendatzen drauzquiát, ceren eſtali baitrauztec gauça hauc çuhurréy eta adituey, eta Luc 10.21.

manifestatu baitrauztec haour chipiey.

26 Bay Aitá, ceren hala içan baita hire placer ona.

Ioan 3.35. 27 *Gauça guciac niri neure Aitaz eman çaizquit: *eta nehorc eztu eçagutzen Semea Aitác baicen: ezeta Aita nehorc eztu eçagutzen Semeac baicen, eta nori-ere Semeac manifestatu nahi vkanen baitrauca.

Ioan 6.46.

28 Çatozte enegana fatigatuac eta cargatuac çareten guciác, eta nic paussu emanen drauçuet çuey.

29 Har eçaçue ene vztarria çuen gainera, eta ikas eçaçue eneganic ecen eme naicela eta bihotzez humil; *eta çuen ariméçát paussu eridenen duçue.

Hier.6.16.

1.Ioan 5.3. 30 *Ecen ene vztarria aisit da, eta ene cargá arin.

## CAP. XII.

*1 Disciplulac Sabbath egunean buruca idoquiten ari. 7 Misericordia eta Sacrificioa. 8 Sabbathoa. 13 Escu eyharduna sendatu. 11 Ardi lecera eroria. 15 Christec eriac sendatzen. 21 Gentilén sperançá. 22 Demoniatua sendatu. 24, 31 Blasphemioa. 25 Resuma çathitua. 28 Iaincoaren Spiritua. 33 Arbore ona edo gaichtoa. 39 Ionasen signoa. 41 Niniuacoac. 42 Egu-erdi aldeco reguiná. 43 Spiritu gaichtoac. 49 Christen eguiazco ahaideac cein.*

Marc 2.23 luc 6.1. deut.23.25.

1 *DEmbora hartan ioaiten cen Iesus ereincetan gaindi Sabbath egun batez: eta haren discipuluac ciraden gosse, eta has citecen buruca idoquité, eta iaten,

2 Eta Phariſeuec ikuſſiric errã cieçoten, Horrá, hire diſcipuluéc eguiten dié *Sabbathoan eguin ſori eztena.

3 Baina harc errã ciecén, Eztuçue iracurri *Dauid-ec goſſez eguin çuena eta harequin ciradenec?

1.Sam.21.6.

4 Nola ſarthu içan cen Iaincoaren etchean, eta propoſitionezco oguiac ian cituen: hetaric iatea ez haren, ez harequin ciradenén, *Sacrificadorén baicen ſori etzelaric?

Exo.29.33 leuit.3.31, eta 24.9.

5 Edo eztuçue iracurri Leguean, nola Sabbath *egunetan* Sacrificadoréc templean Sabbath eguna hauſten dutén, eta hoguen-gabe diraden?

6 Bada erraiten drauçuet, ecen templea baino handiagobat hemen dela.

7 Eta baldin bacinaquite cer den, * Miſericordia nahi dut eta ez ſacrificio, etzintuqueizten condemnatu hoguen-gabeac.

Oſe.6.6.

8 Ecen Sabbathoaren-ere Iaun da guiçonaren Semea.

9 *Eta handic partituric hayén ſynagogara ethor cedin.

Marc 3.1. luc 6.6.

10 Eta huná, cen *han* guiçombat eſcua eyhar çuenic: eta interroga ceçaten, ciotela, Sori da Sabbath *egunean* ſendatzea? *haur cioiten*, hura accúſa leçatençat.

11 Eta harc erran ciecén, Nor içanen da çuetaric guiçona, ardibat duenic: eta, baldin hura Sabbathoan lecera eror badadi, harturen eta altchaturen eztuena?

12 Eta cembatez da guiçona ardia baino guehiago? Beraz sori da Sabbathoetá vngui eguitea.

13 Orduan diotsó guiçon hari, Heda eçac eure escua. Eta heda ceçan, eta bercea beçain senda cedin.

14 Eta Phariseuéc ilkiric har ceçaten conseillu, haren contra, nolatan hura hil leçaqueten.

15 Baina Iesusec *hori* eçaguturic leku eguin ceçan handic: eta iarreiqui cequión gendalde handia, eta hec guciac senda citzan,

16 Eta mehatchurequin debeta citzan ezleçaten manifesta.

17 Compli ledinçát Esáias prophetáz erran içan cena, cioela,

*Esa.42.1.* 18* Huná, ene cerbitzari elegitu dudana, ene maitea, ceinetan hartzē baitu bere atseguin ona ene arimác: eçarriren dut neure Spiritua haren gainean, eta iugemendu Gentiley predicaturen draue.

19 Eztu iharduquíren, ezeta oihuric eguinen, eta nehorc eztu carriquetá harē voza ençunen.

20 Canabera çarthatua eztu chehaturen, eta kea darión lihoa eztu iraunguiren: iugemendua victoriatan ilki eraci diroeno.

21 Eta haren icenean Gentiléc sperança vkanen dute.

*Luc 9.32* *luc 11.14.* 22 *Orduan presentatu içan çayó demoniatu itsu eta mutubat: eta senda ceçan hura, halaco maneraz non itsu eta mutu *cena* minço baitzen eta ikusten baitzuen.

23 Eta ſpanta cedin populu gucia, eta erraiten çuen, Ezta haur Dauid-en ſemea?

24 Baina Phariſeuéc *hori* ençunic, erraiten çuten: *Hunec eztitu deabruac campora egoizten Beelzebub deabruén princearen partez baicen.

Leben 9.34 marc 3.22. luc 11.15.

25 Baina Ieſuſec eçaguturic hayén penſamenduac, erran ciecén, Bere contra partitua den reſuma gucia, deſeguinen da: eta bere contra partitua den hiric edo etchec, eztu iraunen.

26 Eta baldin Satanec Satã campora egoizten badu, bere cõtra partitua da: nolatan beraz iraunen du haren reſumác?

27 Eta baldin nic Beelzebub-en partez campora egoizten baditut deabruac, çuen ſeméc noren partez campora egoizten dituzte? Halacotz hec çuen iuge içanen dirade.

28 Baina baldin nic Iaincoaren Spirituaz campora egoizten baditut deabruac, beraz ethorri da çuetara Iaincoaren reſumá.

29 Ezpa nolatan nehor ſar ahal daite borthitz baten etchera, eta haren oſtillamendua pilla, baldin lehen eſteca ezpadeça borthitza? eta orduan haren etchea pillaturen duque.

30 Enequin eztena ene contra da, eta enequin biltzen ari eztena barreyatzen ari da.

31 * Halacotz erraiten drauçuet, bekatu eta blaſphemio gucia barkaturen çaye guiçoney: baina Spirituaren *contretaco* blaſphemioa barkaturen etzaye guiçoney.

Marc 3.24 luc 12.10. 1.ioã.5.13.

32 Eta nor-ere minçaturen baita guiçona-

ren Semearen contra, barkaturen çayo hari: baina nor-ere minçaturen baita Spiritu ſainduaren contra, etzayo barkaturen hari ez ſecula hunetan, ez ethorteco denean:

33 Edo eguiçue arbore ona, eta haren fructua on: edo eguiçue arbore vſtela, eta harẽ fructua vſtel: ecen fructutic arborea eçagutzen da.

34 Viperén caſtá, nolatan vngui minça ahal çaitezquete gaichto çaretelaric? * ecen bihotzeco abundantiatic ahoa minço da.

Luc 6.45.

35 Guiçon onac bihotzeco theſaur onetic idoquiten ditu gauça onac: eta guiçon gaichtoac theſaur gaichtotic idoquiten ditu gauça gaichtoac.

36 Baina badiotſuet, eçen guiçonéc erran duqueiten hitz alfer guciaz, contu rendaturen dutela iudicioco egunean.

37 Ecen eure hitzetaric iuſtificaturen aiz, eta eure hitzetaric condemnaturen aiz.

38 Orduan ihardets ceçaten Scribetaric eta Phariſeuetaric batzuc, cioitela, Magiſtruá, * nahi guendiquec hireganic cembeit ſigno ikuſſi.

Berriz 16.1
luc 11.29
1.cor. 1.22.

39 Baina harc ihardeſten çuela erran ciecén, Natione gaichtoa eta adulteroa ſigno eſquez dago: baina ſignoric etzayo emanen, Ionas prophetaren ſignoa baicen.

40 * Ecen hala nola Ionas balenaren ſabelean hirur egun eta hirur gau içan baitzén: hala içanen da guiçonaren Semea lurraren bihotzean, hirur egun eta hirur gau.

Ionas 2.2.

41 Niniuaco guiçonac iaiquiren dirade iudi-

cioân natione hunequin, eta cõdemnaturen dute haur:* ceren hec emendatu baitziraden Ionassen predicationera, eta huna, Ionas bainoagoa hemen. Ionas 3.5.

42 * Egu-erdico reguiná iaiquiren da iudicioan natione hunequin, eta *harc* condemnaturen du haur: ceren ethor baitzedin lurraren bazterretic Salomonen sapientiaren ençutera, eta huná, Salomon bainoagoa hemen. 1.Reg.10.1 1.chro.9.1.

43 * Bada spiritu satsua ilki denean guiçonaganic, leku leihorréz dabila, paussu bilha, eta eztu erideiten. Luc 11.24

44 Orduan erraiten du, Itzuliren naiz neure ilki naicen etchera. Eta ethorri denean, erideiten du hutsa, escobaturic eta appainduric.

45 Orduan ioaiten da, eta hartzen ditu berequin berceric çazpi spiritu bera baino gaichtoagoac, eta sarthuric habitatzen dirade han, * eta guiçon haren fina hatsea baino gaichtoago da: hala natione gaichto huni-ere helduren çayó. 2 Pier.2.20 heb.6.4. eta 10.26.

46 * Eta hura oraino populuari minço çayola, huná, haren ama eta anayeac ceuden lekorean, harequin minçatu nahiz. Marc 3.31 luc 8.20.

47 Eta cembeitec erran cieçón, Hará, hire ama eta hire anayeac lekorean diaudec, hirequin minçatu nahiz.

48 Baina harc ihardesten çuela erran cieçón *hura* erran cionari, Nor da ene ama, eta nor dirade ene anayeac?

49 Eta hedaturic bere escua bere discipuluén gainera, erran ceçan, Huná ene ama eta ene a-

nayeac.

50 Ecen norc-ere eguinen baitu ene Aita ceruëtan denaren vorondatea, hura da ene anaye, eta arreba, eta ama.

## CAP. XIII.

*3 Haci ereillearen comparationea. 18 Haren declarationea. 10, 14 Cergatic Chriſt comparationez minço den 21 Perſecutionea. 22 Mundua, abraſtaſſunac. 24 Hiracaren comparationea. 31 Muſtarda bihiarena. 33 Altchagarriarena. 44 Theſaur landán gordearena. 45 Perlena. 47 Itſaſſora egotzi ſarena. 54 Chriſt bere herrian menoſpreciatu.*

Marc 4.1. luc 8.5.

1* EGun hartan berean Ieſus etchetic ilkiric, iar cedin itſas coſtán.

2 Eta bil cedin harengana gendetze anhitz, hambat non vnci batetara iarthuric iar baitzedin: eta gendetze gucia itſas coſtán cegoen.

3 Eta erran ciecén anhitz gauça comparationez, cioela, Huná, ereillebat ilki cedin ereitera.

4 Eta ereitean *hacitic* batzu eror citecen bide bazterrera: eta choriac ethorri içan dirade, eta iretſi vkan dituzte hec.

5 Eta batzu erori içan dirade leku harriçuetara, non ezpaitzuten heuragui lurric: eta bertan ilki citecen, ceren ezpaitzuten lur barneric.

6 Guero iguzquia goratu eta, erre içan dirade, eta ceren ezpaitzuten erroric, eyarthu içan dirade.

7 Eta batzu erori içan dirade elhorri artera: e-

ta handitu içan dirade elhorriac, eta itho vkan dituzte hec.
8 Eta batzu erori içan dirade lur onera: eta fructu renda ceçaten, batac ehun, berceac hiruroguey, eta berceac hoguey eta hamar.
9 Ençuteco beharriric duenac, ençun beça.
10 Orduan hurbilduric discipuluéc errã cieçoten, Cergatic comparationez minço atzaye?
11 Eta harc ihardesten çuela erran ciecén, Ceren çuey eman baitzaiçue ceruëtaco resumaco secretuén eçagutzea, baina hæy etzaye eman.
12* Ecen norc-ere baitu, hari emanen çayó, eta hambatez guehiago vkanen du: baina norc-ere ezpaitu, hari duena-ere edequiren çayó. *Berriz 25. 29.*
13 Halacotz comparationez minço natzaye: ceren dacussatelaric ezpaitute ikusten, eta ençuten dutelaric ezpaitute ençuten, ez aditzen.
14 *Hala complitzen da hetan Esaiasen prophetiá, ceinec baitio, Ençutez ençunen duçue, eta ez adituren: eta dacussaçuela ikussiren duçue eta etzaizquiote oharturen. *Esa. 6. 9. marc 4. 12. luc 8. 10. ioan. 12. 40 act. 28. 26. rom. 11. 8.*
15 Ecen guicendua da populu hunen bihotza, eta beharriéz gogorqui ençun vkan duté, eta beguiac ertsi vkan dituzté: beguiez ikus, eta beharriéz ençun, eta bihotzaz adi ezteçaten, eta conuerti eztitecen, eta senda eztitzadan.
16 Bada dohatsu dirade çuen beguiac, ecen ikusten duté: eta çuen beharriac, ecen ençuten duté.
17 *Ecen eguiaz erraiten drauçuet, anhitz Prophetac eta iustoc desiratu vkan dutela ikuste- *Luc 10. 24.*

ra *çuec* ikuſten dituçuen gaucén, eta ezpaitituzte ikuſſi: eta ençutera, ençuten dituçuen gaucén, eta ezpaitituzte ençun.

*Marc 4.15 luc 8.11.*

18* Çuec bada ençuçue ereillearen comparationea.

19 Noiz-ere nehorc ençuten baitu reſumá hartaco hitza, eta ez aditzen, ethorten da Gaichtoa hura, eta harrapatzen du haren bihotzean erein cena: haur da bide bazterrean hacia recebitu duena.

20 Eta leku harriçuetara hacia recebitu duena, haur da, hitza ençuten, eta hura bertan bozcariorequin recebitzen duena:

21 Baina eztu erroric bere baithan, halacotz da iraute gutitaco: eta tribulationeric edo perſecutioneric hitzagatic heltzen denean, bertan ſcandalizatzen da.

22 Eta elhorri artera hacia recebitu duena, haur da hitza ençuten duena, baina mundu hunetaco artháe, eta abraſtaſſunezco enganioac ithotzen duté hitza, eta fructuric eztu eguiten.

23 Baina lur onera hacia recebitu duena, haur da hitza ençuten eta aditzen duena, ceinec fructu ekarten baitu eta eguiten, batac ehun, eta berceac hiruroguey, eta berceac hoguey eta hamar.

24 Berce comparationebat propoſa ciecén, cioela, Comparatu da ceruëtaco reſumá haci ona bere landán erein duen guiçonarequin.

25 Baina guiçonac lo ceunçala, ethor cedin haren etſaya, eta erein ceçan hiraca, ogui arteá:

eta

eta ioan cedin.

26 Eta handitu cenean belharrá, etá fructu eguin çuenean, orduan aguer cedin hiraca-ere.

27 Orduan ethorriric aitafamiliaren cerbitzariéc erran cieçoten, Iauna, eztuc haci ona erein eure landan? nondic du beraz hiraca?

28 Eta harc erran ciecén, Guiçon etsayac hori eguin du. Eta cerbitzariéc erran cieçoten, Nahi duc bada goacen eta bil deçagun hura?

29 Eta harc errã ciecén, Ez: hiracaren biltzean oguia-ere idoqui ezteçaçuen harequin batean.

30 Vtzitzaçue biac elkarrequin handitzera vzta-arterano: eta vzta dẽborán, erranen drauet biltzaley, Bil eçaçue lehenic hiracá, eta hers eçaçue açautoz erratzecotzat: baina oguia bil eçaçue ene granerera.

31 *Berce comparationebat proposa ciecén, cioela, Comparatu da ceruëtaco resumá, mustarda bihi guiçon batec harturic bere landán erein duenarequin.

*Marc 4.30 luc 13.18.*

32 Cein baita haci gucietaco chipiena, baina handitu denean, berce belharrac baino handiago da: eta arbore bilhatzen da, hambat non ethorten baitirade ceruco choriac, eta ohatzeac eguiten baitituzte haren adarretan.

33 *Berce cõparationebat erran ciecén, *cioela*, Comparatu da ceruëtaco resumá altchagarriarequin, cein emazte batec harturic hirur neurri irinen barnean gorde vkan baitu, gucia altcha dadin arterano.

*Luc 13.21.*

34 *Gauça hauc guciac erran cietzén Iesusec

*Marc 4.33*

comparationez gendetzey, eta comparatione gabe etzayen minçatzen.

35 Compli ledinçát Prophetáz erran içan dena, cioela, *Irequiren dut comparationez neure ahoa: declaraturen ditut munduaren fundatzetic gorderic egon içan diraden gauçác.

*Psal.78.2.*

36 Orduan vtziric populua ethor cedin etchera Iesus: eta ethorri içan çaizcan bere discipuluac, cioitela, Declara ieçaguc landaco hiracaren comparationea.

37 Eta harc ihardesten çuela érran ciecén, Haci ona ereiten duena da guiçonaren Semea.

38 Eta landá da mundua: eta haci ona, resumaco haourrac dirade: eta hiracá, Gaichtoaren haourrac dirade:

39 Eta hura erein duen etsaya, da deabrua: *eta vztá, mũduaren fina da: eta vzta biltzaleac, Ainguerüäc dirade.

*Apoc.14.15. ioel.3.13*

40 Bada hala nola biltzen baitute hiracá, eta suan erratzen, hala içanen da mundu hunen finean.

41 Igorriren ditu guiçonaren Semeac bere Ainguerüäc, eta bildurẽ dituzte harẽ resumatic scandalo guciac, eta iniquitate eguiten dutenac.

42 Eta egotzirẽ dituzte labe daichecanera: han içanen da nigar eta hortz garrascots.

43 *Orduan iustoéc arguituren duqueite iguzquiac beçala, bere Aitaren resumán. Ençuteco beharriric duenac ençun beça.

*Sap.3.7. daniel 12.3*

44 Berriz cõparatu da cerüëtaco resumá thesaur landa batetan gorderic dagoenarequin, hu-

ra eridenic guiçon batec estali vkan du:eta harçazco bozcarioz ioaiten da,eta duen gucia saltzen du,eta landa hura erosten.
45 Berriz cōparatu da ceruëtaco resumá guiçō marchāt perla ederrén bilha dabilanarequin
46 Ceinec precio handitaco perlabat eriden çuenean, ioanic sal baitzeçan çuen gucia, eta eros baitzeçan hura.
47 Berriz comparatu da ceruëtaco resumá sare itsassora egotzi batequin,eta *gauça* mota gucietaric biltzen duenarequin:
48 Cein bethe içan cenean idoqui baitzeçaten vr ezpondara:eta iarriric bil citzaten onac vncietara, eta gaichtoac cāporát iraitz citzatē.
49 Hala içanen da munduaren finean:ethorriren dirade Aingueruäc, eta separaturen dituqueizte gaichtoac iustoén artetic.
50 Eta egotzirē dituqueizte labe daichecanera:han içanen da nigar eta hortz garrascots.
51 Erraiten draue Iesusec, Aditu dituçue gauça hauc guciac?Diotsate,Bay Iauna.
52 Eta harc erran ciecén, Halacotz Scriba ceruëtaco resumán iracatsia den gucia, comparatu da cembeit aitafamilia bere thesauretic gauça berriric eta çaharric idoquitē duē batequin:
53 Eta guertha cedin cōparatione hauc acabatū cituenean,Iesus iragan baitzedin handic.
54 *Eta ethorri cenean bere herrira, iracasten cituen hec berén synagoguetan: *hámbat* non spantatuac baitzeuden, eta erraiten baitzuten, Nondic huni sapientia haur eta verthuteac?

Marc 6. 1.
luc 4.16.

55 Ezta haur charpanter-semeʔezta horren ama Maria deitzen, *eta horren anayeac Iacques eta Iosſes eta Simon eta Iuda?

*Ioan 6.41.*

56 Eta horren arrebác eztirade guciac gu baithan?nondic bada huni gauça hauc gucioc?

57 Eta ſcandalizatzen ciraden hartan. Eta Ieſuſec erran ciecén, *Ezta Prophetaric ohore gabe bere herrian eta bere etchean baicen.

*Marc 6.4. luc 4.24. Ioan 4.44.*

58 Eta etzeçan eguin han verthute anhitzic, hayén incredulitatearen cauſaz.

CAP. XIIII.

*2 Herodeſec Chriſtez duen opinionea. 3, 10 Ioannes Baptiſtaren hatzamaiteco eta hiltzeco cauſá. 13 Chriſt deſertura retiratzen. 17 Borz oguiezco eta bi arrainezco miraculua. 23 Mendian Chriſtec othoitz eguiten. 26 Eta itſas gainez çabilala, 30 Pierris hundatzetic beguiratzen. 31 Fedea duda gabe içateco.*

1 *DEmbora hartã ençũ ceçã Herodes Tetrarchac Ieſuſē famá:

*Marc 6.14 luc 9.7.*

2 Eta erran ciecen bere cerbitzariey, Haur Ioannes Baptiſtá da, hura reſuſcitatu içan da hiletaric, eta halacotz verthutéc obratzen dutē hunetan.

3 *Ecen Herodeſec hatzamanic Ioannes eſteca ceçan, eta preſoindeguian eçar, Herodias haren anaye Philipperen emaztearen cauſaz.

*Marc 6.17. luc 3.19.*

4 Ecen erraiten ceraucan hari Ioãneſec, Eztuc ſori hori duán.

5 Eta hura hil nahi çuelaric populuaren beldur-

cen,*ceren Propheta beçala baitzaducatē hura. *Ber.21.26.*
6 Bada Herodesen sor eguneco bestá eguiten cenean, dança cedin Herodiasen alabá artean: eta Herodesen gogara eguin ceçan.
7 Nondic iuramēdurequin prometta baitzieçon,emanen ceraucala cer-ere esca bailedi.
8 Harc bada aitzinetic amáz instruitu içanic, Indac(dio)hemen platean Ioannes Baptistaren buruä.
9 Eta triste cedin regue:baina cinaren, eta harequin mahainean iarriric ceudenén causaz,mana ceçan eman lequión.
10 Eta igor ceçan Ioannesi presoindeguian buruären edequi eracitera.
11 Eta ekarri içan da haren buruä platean, eta eman cequión nescatchari, eta *harc* presenta cieçón bere amari.
12 Guero ethor citecen haren discipuluac, eta eraman ceçaten haren gorputza,eta ohortz ceçaten:eta ioanic conta cieçoten Iesusi.
13 *Eta *hori* ençunic Iesus parti cedin handic vnci batetan leku desertu batetara appart: eta ençunic gendetzeac oinez iarreiqui içan çaizcan hirietaric. *Marc 6.32 luc 9.10.*
14 Eta ilkiric Iesusec ikus ceçan gēdetze handibat eta compassione har ceçan heçaz, eta hayén arteco eriac senda citzan.
15 Eta arrats aldean ethorri içan çaizcan bere discipuluac,cioitela,Leku desertua duc haur, eta ordua ia iragan, eyec cōgit gendetzey, burguëtarát ioanic iateco eros deçatençat.

16 Baina Iesusec erran ciecén, Eztute ioaiteco mengoaric, eye çue ceuroc iatera.

Marc 6.38 luc 9.13. ioan 6.5.

17 Eta hec diotsote, *Eztiagu hemen borz ogui eta bi arrain baicen.

18 Eta harc erran ciecen, Ekaztaçue huna.

19 Eta populua belhar gainean iartera manaturic, eta borz oguiac eta bi arrainac harturic, beguiac cerurat goitituric, gratiác rēda citzan, eta hautsiric eman cietzen discipuluey oguiac, eta disciputuéc gendetzey.

20 Eta ian ceçaten guciéc, eta ressasia citecen: eta goiti citzaten çathi soberatuetaric hamabi sasqui betheric.

21 Eta ian çutenac ciraden borz milla guiçonen inguruä, emazteac eta haourrac gabe.

22 Eta bertan Iesusec bortcha citzan bere discipuluac vncian sartzera, eta haren aitzinean berce aldera iragaitera: populuari congit lemon bizquitartean.

23 Eta congit emanic populuari, igan cedin mendira bereciqui, othoitz eguin leçāçát.* Eta arrastu cenean ber-bera cen han.

Marc 6.47 ioan 6.16.

24 Eta vncia ia itsassoaren artean cen, baguéz tormentatua: ecen haice contra cen.

25 Eta gauären laurgarren veillán ioan cedin hetara Iesus, itsas gainez çabilala.

26 Eta hura ikussiric itsas gainez çabilala, discipuluac trubla citecen, erraiten çutela, Fantosi mabat da, eta beldurtiz oihu eguin ceçaten.

27 Baina bertan minça cequién Iesus, cioela, Sporça çaitezte: ni naiz etzaretela beldur.

28 Eta ihardeſten ceraucala Pierriſec erran ceçan, Iauna, baldin hi bahaiz, mana neçac hiregana ethortera vr gainez.

29 Bada harc erran ceçan, Athor. Eta iautſiric vncitiç Pierris ioan cedin vr gainez, Ieſuſgana ethor ledinçát.

30 Baina haicea ſendo ikuſſiric, icit cedin: eta hundatzen haſſi cenean oihu eguin ceçan, cioela, Iauna, ſalua neçac.

31 Eta bertan Ieſus eſcua hedaturic lot cequión, eta diotſó, O fede chipitacoá, cergatic dudatu duc?

32 Eta ſarthu ciradenean vncira, ſoſſega cedin haicea.

33 Orduan vncian ciradenéc ethorriric adora ceçaten hura, cioitela, Eguiazqui Iaincoaren Seme aiz.

34 *Eta berce aldera iraganic ethor citecen Geneſaretco lurrera. *Marc 6.53*

35 Eta hura eçagutu vkan çutenean leku hartaco guiçonéc, igor ceçaten inguruco aldiri gucietara, eta preſenta cietzoten eri ciradẽ guciac.

36 Eta othoitz eguiten ceraucaten ſolament hunqui leçaten haren abillamendu ezpaina, eta hunqui vkan çuten guciac, ſenda citecen.

CAP. XV.

3 *Guiçonén doctrináz.* 12 *Scãdalizatzeaz.* 13 *Lãdare erroetaric idoquirẽ denaz.* 18 *Cerc nehor ſatſutzen duen. Chananearen alabá ſendatu.* 24 *Chriſt norgatic igorri içan den.* 26 *Haourrén oguiaz.* 28 *Fedeaz.* 30 *Chriſtec eriac ſendatzen.* 36. *Çazpi oguiezco miraculua.*

Marc 7.1. 1 * ORduan ethorten dirade Iesusgana Ierusalemetar Scriba eta Phariseu batzu, dioitela,

2 Cergatic hire disciplulec iragaiten dute aitzinecoen ordenança? ecen eztitie ikutzen bere escuac oguia iaten dutenean.

3 Eta harc ihardesten çuela erran ciecén, Eta çuec cergatic iragaiten duçue Iaincoaren manamendua çuen ordenançaz?

Exo.20.12. deut.5.16. eph.6.2. Exo.21.17. leui.20.9. prou.20.20

4 Ecen Iaincoac manatu vkan du, dioela,* Ohoraitzac eure aita eta ama. Eta, *Aita edo ama maradicaturen duena, herioz hil bedi.

5 Baina çuec dioçue, Norc-ere erranen baitrauca aitari edo amari, Eneganic den dono gucia probetchaturen çaic: ohora ezpadeça-ere bere aita edo bere ama *hoguen gabe date.*

6 Eta ezdeustu vkan duçue Iaincoaren manamendua çuen ordenançaz.

7 Hypocritác, vngui prophetizatu vkan du çu eçaz Esaiasec, dioela,

Esa.29.13 8 * Populu haur ahoz hurbiltzen çait, eta ezpainéz ohoratzen nau: baina hauén bihotza vrrun da eneganic.

9 Baina alferretan ohoratzen naute, iracasten dituztela doctrinatzát guiçonén manamenduac.

Marc 7.14. 10 * Eta populua beregana deithuric erran ciecén, Ençun eçaçue eta adi eçaçue,

11 Eztu ahoan ſartzen denac ſatſutzen guiçona: baina ahotic ilkiten denac ſatſutzen du guiçona.

12 Orduan hurbilduric bere diſcipuluéc erran cieçoten, Eçagutu duc nola Phariſeuac propos hori ençunic ſcandalizatu içan diraden?

13 Eta harc ihardeſten çuela erran ceçan, *Ene Aita ceruëtacoac landatu eztuen landare gucia erroetaric idoquiren da. *Ioan.15.1*

14 Vtzitzaçue, *itſuric itſuén guidari dirade: baldin itſuac itſua guida badeça, biac hobira eroriren dirade. *Luc 6.39.*

15* Orduan ihardeſten çuela Pierriſec erran cieçon, Declara ieçaguc comparatione hori. *Marc 7.17*

16 Eta Ieſuſec erran ceçan, Oraino çuec-ere adimendu gabe çarete?

17 Oraino eztuçue aditzē ecen ahoan ſartzen den gucia, ſabelera ioaiten dela, eta retreitera egoizten dela?

18 Baina ahotic ilkiten diradenac, bihotzetic partitzen dirade, eta hec ſatſutzē dute guiçona.

19*Ecen bihotzetic partitzen dirade penſamēdu gaichtoac, hiltzecác, adulterïoac, paillardiçác, ohoinqueriác, teſtimoniage falſuac, gaitzerraitecác. *Gen.6.5, eta 8.21,*

20 Hauc dirade guïçona ſatſutzē dutenac: baina eſcuac ikuci gaberico iateac, eztu guiçona ſatſutzen.

21* Eta ilkiric handic Ieſus ioan cedin Tyreco eta Sidongo comarquetarat. *Marc 7.24*

22 Eta huná, emazte Chananeabat aldiri he-

taric ilkiric, oihuz iar cedin, ciotſola, Auç pietate niçaz Dauid-en ſeme Iauná, ene alaba duc deabruaz gaizqui tormentatua.

23 Baina harc etzieçon ihardets hitzic. Orduan hurbilduric bere diſcipuluéc othoitz ceguioten, cioitela, Emóc cõgit: ecen oihuz diaoc gure ondoan.

*Lehen.10.6* 24 Eta harc ihardeſten çuela erran ceçan, *Eznaiz igorri Iſraeleco etcheco ardi galduetara baicen.

25 Eta harc ethorriric adora ceçan hura, cioela, Iauna, aiuta neçac.

26 Eta harc ihardeſten çuela erran ceçan, Eztun gauça bidezcoa haourrén oguiarẽ hartzea, eta chakurrey egoiztea.

27 Baina harc erran ceçan, Hala duc, Iauna, baina chakurreç-ere bere nabuſſién mahainetic erorten diraden appurretaric iaten dié.

28 Orduan ihardeſten çuela Ieſuſec erran cieçón, O emaztea, hãdi dun hire fedea: eguin bequin nahi dunán beçala. Eta ſenda cedin haren alabá orduandanic.

29 Eta partituric handic Ieſus ethor cedin Galileaco itſas aldera: eta iganic mendira, iar cedin han.

*Eſa.35.5.* 30 Orduan ethor cedin harengana anhitz gendetze, çutela berequin *mainguric, itſuric, muturic, hebainic eta anhitz berceric: eta eçar citzaten Ieſuſen oinetara, eta ſenda citzan.

31 *Hala* non populuac mirets baitzeçan çaçuſquianean mutuac minçatzen, hebainac

ſendaturic, mainguäc çabiltzala, itſuéc ikuſten çutela: eta glorifica ceçaten Iſraeleco Iaincoa.

32* Orduan Ieſuſec beregana deithuric bere diſcipuluac erran ceçan, Compaſſione dut populu huneçaz: ecen ia hirur egun du enequin dagoela, eta eztute cer ian deçaten: eta eztitut baruric igorri nahi, bidean flaca eztitecençat. *Marc 8.1.*

33 Eta bere diſcipuluéc diotſote, Nondic guri hambat ogui deſertuan hunambat genderen reſſaſiatzeco?

34 Eta dioſte Ieſuſec, Cembat ogui dituçue? Eta hec erran cieçoten, Çazpi, eta arraintcho batzu.

35 Orduan mana ceçan populua lurrean iartera.

36 Eta harturic çazpi oguiac eta arrainac, gratiac rendaturic hauts citzan, eta eman cietzén bere diſcipuluey: eta diſcipuluéc populuari.

37 Eta ian ceçaten guciéc, eta reſſaſia citecen: eta goiti citzaten çathi ſoberatuetaric çazpi ſaſqui betheric.

38 Eta ian çutenac ciraden, laur milla guiçon, emazteac eta haourrac gabe.

39 Orduan congit emanic gendetzeari, igan cedin vnci batetara: eta ethor cedin Magdaleco bazterretara.

## CAP. XVI.

*4 Ionasen signoa Phariseuey emaiten. 6 Hayén altcha garria. 13 Gendéc Christez duten reputationea. 16 Christ prometattu içan cena, nola Iesus den. 17 Fedea Iaincoaganic heldu. 18 Harriaren gainean Eliçá. 19 Gakoac. Lotzea. Lachatzea. 21 Christec aitzinetic bere herioa erraiten. 23 Pierris Sathan deithu. 24 Christi iarreiqui nahi çayonac cer eguiteco. 25 Vicitzearen galtzea edo erideitea.*

Marc 8.12 luc 12.54 Iehen 12.39

1 * ETa ethorriric Phariseuéc eta Sadduceuéc, tentatzen çutela requiri ceçaten cembeit signo cerutic eracuts liecén.

2 Baina harc ihardesten çuela erran ciecén, Arratsean, erraitten duçue, Dembora eder *eguinen du*: ecen gorri da ceruä.

3 Eta goicean *dioçue*, Egun tempestate *eguinen du*: ecen ceruä orzgorri gaitz da. Hypocritác, ceruären irudiaz, iugeatzen daquiçue, eta demboretaco signoéz ecin diroçue?

Iehen 12.39

4 * Generatione gaichtoa eta adulteroa signo esquez dago, eta signoric etzayo hari emanen

Ionas 2.1.

* Ionas prophetarē signoa baicen. Eta hec vtziric ioan cedin.

Marc 8.14 luc 12.1.

5 * Eta ethorri ciradenean harē discipuluac berce aldera, ahanz cequién ogui hartzera.

6 Eta Iesusec erran ciecen, Gogoauçue eta beguira çaitezte Phariseuén eta Sadduceuén altchagarritic.

7 Eta hec iharduquiten çutén bere artean, cioitela, *Hori dio*, ceren oguiric hartu eztugun.

8 Eta Iesusec eçaguturic erran ciecén, Cer diharducaçue ceurón artean, fede chipitacoác, ceren oguiric hartu eztuçuen?

9 Oraino eztuçue aditzen, eta etzarete guehiagóric orhoit * borz milla *guiçonén* borz oguiéz, eta cembat sasqui goititu cintuzten?

Lebē 14. 15 ioan. 6. 9.

10 * Ezeta laur milla *guiçonén* çazpi oguiéz, eta cembat sasqui goititu cintuzten?

Lebē 15. 34

11 Nola eztuçue aditzen ecen eztrauçuedala oguiz erran, beguira cindeizten Phariseuén eta Sadduceuén altchagarritic?

12 Orduan adi ceçaten ecen etzuela erran, beguira litecen ogui altchagarritic, baina Phariseuén eta Sadduceuén doctrinatic.

13 * Eta ethorri cenean Iesus Cesareaco bazter Philipperenetara, interroga citzan bere discipuluac, erraiten çuela, Ni nor naicela dioite guiçonéc, guiçonaren Semea?

Marc 8. 27 luc 9. 18.

14 Eta hec erran ceçaten, Batzuc, Ioannes Baptista: eta bercéc, Elias: eta bercéc, Hieremias, edo Prophetetaric bat.

15 Dioste, Etá çuec nor naicela dioçue?

16 Ihardesten çuela Simon Pierrisec erran ceçan, * Hi aiz Christ Iainco viciaren Semea.

Ioan. 6. 69.

17 Eta ihardesten çuela Iesusec erran cieçón hari, Dohatsu aiz Simon Ionaren semeá: ecen haraguiac ez odolac eztrauc *hori* reuelatu, baina ene Aita ceruëtan denac.

18 Baina are nic erraiten drauat, ecen hi aicela * Pierris, eta Harri hunen gainean edificaturen dudala neure Eliçá: eta iffernuco borthác etza-

Ioan. 1. 42.

izcala hari garaithuren.

ioan.20.21 19* Eta hiri emanen drauzquiat ceruëtaco resumaren gakoac, eta cer-ere lothuren baituc lurrean, lothua içanen duc ceruëtan: eta cer-ere lachaturen baituc lurrean, lachatua içanen duc ceruëtan.

20 Orduan mana citzan expressuqui bere discipuluac nehori ezlerroten, hura cela IESVS CHRIST.

21 Orduandanic has cedin Iesus bere discipuluey declaratzen, ecen behar çuela ioan Ierusalemera, eta anhitz suffritu Ancianoetaric eta Sacrificadore principaletaric, eta Scribetaric, eta heriotara eman *behar cela*, eta herenenco egunean, resuscitatu.

22 Eta hura appartaturic has cequión Pierris reprotchatzen, cioela, Eurorçaz auc pietate, Iauna: etzaic hiri hori helduren.

23 Eta harc itzuliric errã cieçón Pierrisi, Guibelerat adi eneganic Satan, empatchu atzait: ecen eztituc aditzen Iaincoaren *diraden* gauçác, baina guiçonén *diradenac*.

Lehẽ 10.38 marc 8.34. luc 9.23. eta 14.27 24 * Orduan Iesusec erran ciecén bere discipuluey, Baldin nehor ene ondoan ethorri nahi bada, renuntia beça bere buruäz, eta har beça bere crutzea, eta berrait niri.

Marc 8.35 luc 9.24 eta 17.33 lehen 10.39 ioan.12.25 25 * Ecen norc-ere nahi vkanen baitu saluatu bere vicia, galduren du hura: eta norc-ere galduren baitu bere vicia ene causaz, eridenen du hura.

26 Ecen cer probetchu du guiçonac baldin

mundu gucia irabaz badeça, eta bere arima gal badeça? edo cer emanen du guiçonac bere arimaren recompenſamendutan?

27 Ecen guiçonaren Semea ethorriren da bere Aitaren glorián bere Aingueruëquin: * eta orduan rendaturen drauca batbederari bere obrén araura.

*Pſal.62.12 rom.2.6. apoc.22.12*

28 * Eguiaz diotſuet, badirade hemen preſent diradenetaric batzu, herioa daſtaturen eztutenic, guiçonaren Semea bere reſumara ethorten ikus diroiteno.

*Marc 9.1. luc 9.27.*

## CAP. XVII.

*2 Chriſt transfiguratu. 5 Hura ençuteco. 11 Elias. 13 Ioannes Baptiſta. 15 Lunaticoa ſendatu. 17 Apoſtoluén incredulitatea. 20 Fedearen botherea. 21 Orationea eta barura. 22 Chriſtec bere paſſionea aitzinetic erraiten. 25 Tributa pagatzen.*

1 * ETa ſey egunen buruän, har citzan Ieſuſec Pierris eta Iacques eta Ioannes haren anayea, eta eraman citzan appart mendi gora batetara.

*Marc 9.2. luc 9.28*

2 Eta tranſfigura cedin hayén aitzinean, eta argui cedin haren beguithartea iguzquia beçala, eta haren abillamenduac churi citecen arguia beçala.

3 Eta huná, ikus citzaten Moyſes eta Elias harequin minço ciradela.

4 Eta ihardeſten çuela Pierriſec erran cieçón Ieſuſi, Iauna, on duc gu hemen garén: nahi ba-

duc, eguin ditzagun hemen hirur tabernacle, bat hire, eta bat Moysesen, eta bat Eliasen.

5 Oraino hura minço cela, huná, hodey argui batec estal citzan hec: eta huná vozbat hodeyetic, cioela, *Haur da ene Seme maitea, ceinetá neure atseguin ona hartzen baitut: huni beha ça quizquiote:

*Lehē 3.17. 2.pier.1.17*

6 Eta *hori* ençunic discipuluac eror citeçen, bere beguithartén gainera, eta icit citecē haguitz.

7 Orduan ethorriric Iesusec hũqui citzan hec, eta erran ciecén, Iaiqui çaitezte, eta etzaretela beldur.

8 Eta goitituric bere beguiac nehor etzeçaten ikus Iesus bera baicen.

9 Eta menditic iausten ciradela, mana citzan Iesusec, cioela, Nehori ezterroçuela visionea, guiçonaren Semea hiletaric resuscita daiteno.

*Marc 9.11.*

10* Eta interroga ceçaten bere discipuluéc, cioitela, Cergatic beraz Scribéc erraiten dute *ecen Elias behar dela lehen ethorri?

*Mala. 4.5. lehen 11.14*

11 Eta ihardesten çuela Iesusec erran ciecén, Elias ethorriren bada lehen, eta bere staturaco ditu gauça guciac:

12 Baina erraiten drauçuet ecē Elias ia ethorri dela, eta hura eztute eçagutu vkan, baina eguin dute harçaz nahi vkan duten gucia: hala guiçonaren Semeac-ere suffrituren du hetaric.

13 Orduan adi ceçaten discipuluéc ecen Ioannes Baptistáz erran cerauela.

*Marc 9.17 luc 9.18.*

14* Eta ethorri ciradenean populuagana, ethor cedin harengana guiçombat, haren aitzinean

belhau-

belhauricatzen çela,

15 Eta cioela, Iauna, auc pietate ene ſemeaz, ecen lunatico duc eta gaizqui tormentatzen: ecé maiz erorten duc ſura, eta maiz vrera.

16 Eta preſentatu diraueat hura hire diſcipuluey, eta ecin ſendatu dié.

17 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ceçan, O natione ſinheſte gabea eta bihurriá, noizdrano ſinean çuequin içanen naiz? noizdrano ſinean ſuportaturē çaituztet? ekardaçue hura huna.

18 Eta mehatcha ceçan deabrua Ieſuſec, eta ilki cedin harenganic: eta ſenda cedin muthilla orduandanic.

19 Orduan ethorriric Ieſuſgana appart diſcipuluéc erran cieçoten, Cergatic guc ecin campora egotzi vkan dugu hura?

20 Eta Ieſuſec erran ciecen, Çuen ſinheſte gabeagatic: *ecen eguiaz diotſuet, baldin muſtarda bihibat *den* becembat fede baduçue, erranen draucaçue mendi huni, Iregan adi hemendic hara: eta iraganen da, eta etzaiçue deus impoſſibleric içanen.

Luc 17.6.

21 Baina *deabru* mota haur ezta ilkiten orationez eta barurez baicen.

22 * Eta hec Galilean vſatzen çutela, erran ciecén Ieſuſec, Içanen da, guiçonaren Semea liuraturen baita guiçonen eſcuetara:

Berriz 20.18. marc 9,31. luc 9.44. eta 24.7

23 Eta hilen dute hura: baina hereneco egunea reſuſcitaturen da: eta triſte citecen haguitz.

24 Eta ethorri içan ciradenean Capernaumera, ethor citecē Pierriſgana didrachmác recebi-

e.i.

tzen cituztenac, eta erran cieçoten, Çuen magiſtruac didrachmác eztitu pagatzen?

25 Dio, Bay. Eta etchean ſarthu içan cenean, aitzin cequión IESVS, cioela, Simon, cer irudi çaic? Lurreco reguéc norenganic hartzen dituzté tributac eta taillac? beré haourretaric, ala bercetacoetaric?

26 Diotſa Pierriſec, Bercetacoetaric. Diotſa Ieſuſec, Beraz libre dituc haourrac.

27 Baina ſcandaliza eztitzagunçát, itſaſſora ioanic, egotzac amuä: eta lehen iganen den arraina har eçac, eta haren ahoa irequiric eridenen baituc ſtaterabat: harturic hura eman iecéc enegatic eta hiregatic.

## CAP. XVIII.

*1 Cerüetaco reſumán nor guehién. 4 Humilitatea. 5 Chipiaren recebitzea Chriſten icenean. 6 Ez nehor ſcandalizatzeco. 10 Chipiac ez menoſpreciatzeco. 11 Certara Chriſt ethorri. 12 Ardi errebelatua. 15 Correctione fraternala. 17 Excommunicationea. 21, 35 Barkatzea. 23 Bere cerbitzariey contu eſquez dauen reguearen comparationea.*

*Marc 9. 33 luc 9.46*

1 * ORdu hartan berean ethor citecen Ieſuſgana diſcipuluac, cioitela, Nor da handiena cerüetaco reſuman?

2 Eta deithuric haourtchobat beregana Ieſuſec, eçar ceçan hura hayén artean.

*Berr. 19.14 1 cor. 14.20*

3 * Eta erran ceçan, Eguiaz erraiten drauçuet, baldin conuerti ezpaçaitezte, eta haourtchoac

beçalaca ezpaçaitezte,etzarete ſarthuren ceruëtaco reſumán.

4 Norc-ere bada bere burua humiliaturen baitu haourtcho haur *den* beçala, hura da handiena ceruëtaco reſumán?

5 Eta norc-ere recebituren baitu hunelaco haourtchobat ene icenean,ni recebitzen nau.

6 * Baina norc-ere ſcandalizaturen baitu ni baithan ſinheſten duté chipi hautaric bat,harc hobe luque vrka lequión bere leppoã aſto-errota harribat,eta hunda ledin itſas hundarrean.

*Marc 9.42 luc 17.1.*

7 Malediƈtione munduari ſcandaloén cauſaz: ecen neceſſario da ſcandaloac datocen, badaricere malediƈtione guiçon hari, ceinez ſcandalo ethorten baita.

8 *Baldineta eure eſcuac edo eure oinac trebuca eraciten bahau trenca eçac hura eta iraitzac eureganic,hobe duc hire,mainguric edo eſcuba koitzdun vicitzean ſar adin,ecen ez bi eſcuac edo bi oinac dituála ſuco gehennara iraitz adin.

*Leben 5.30 marc 9.43.*

9 Eta baldin eure beguiac trebuca eraciten bahau, idocac hura, eta iraitzac eureganic : hobe duc hire, begui batarequin vicitzeã ſar adin,ecẽ ez bi beguiac dituala ſuco gehennara iraitz adin

10 Beguirauçue menoſprecia ezteçaçuen chipi hautaric bat: * ecen erraiten drauçuet haueri Ainguerueć bethiere dacuſſatela ene Aita ceruetan denaren beguithartea.

*Pſal.34.8*

11 * Ecen ethorri içan da guiçonaren Semea galdu cenaren ſaluatzera.

*Luc 19.10.*

12 * Cer irudi çaiçue? baldin guiçon batec e-

*Luc 15.4.*

hun ardi baditu,eta hetaric bat errebela badadi, eztitu lauroguey eta hemeretziac vtziten, eta mendietara ioanic eztu errebelatu cena bilhatzen?

13 Eta baldin guertha badadi eriden deçan hura,eguiaz erraiten drauçuet ecen bozcario guehiago duela harçaz,ecen ez lauroguey eta hemeretzi errebelatu etziradenez.

14 Halaber ezta çuen Aita ceruëtan denarẽ vorondatea chipi hautaric bat gal dadin.

Luc 17.3. leui 19.17 eccl. 19.13. iac.5.19.

15* Eta baldin hire anayec hire contra faltatu badu,oha eta reprehendi eçac hura,hire eta haren beraren artean: baldin behatzen baçaic,irabaci duc eure anayea.

16 Baina baldin behatzen ezpaçaic, har itzac eurequin oraino bat edo biga: * biga edo hirur testimonioren ahoan hitz gucia fermu dençat.

Deu.19.15 ioan.8.17 2.cor.13.1. heb. 10. 28

17 Eta baldin hæy behatzen ezpaçaye, erróc Eliçari: eta baldin Eliçari behatzen ezpaçayó, albeiheduca * pagano eta publicano beçala.

2.Cor 5.9. 2.the. 3.14 Ioan.20.23

18 Eguiaz erraiten drauçuet, *cer-ere lothurẽ baituçue lurrean, lothua içanen da ceruän: eta cer-ere lachaturen baituçue lurrean, lachatua içanen da ceruän.

19 Berriz diotsuet ecen baldin çuetaric biguec consenti badeçate lurraren gainean, esca ditecen gauça gucia eguinen çayela ene Aita ceruetan denaz.

20 Ecen non baitirade biga edo hirur bilduric ene icenean, han naiz hayén artean.

21 Orduan harengana hurbilduric Pierrisec erran ceçan, Iauna, cembatetarano bekatu eguinen du ene contra ene anayec, eta barkaturen draucat?*ala çazpitarano?

Luc 17.4.

22 Diotsô IESVSEC, Eztiossât çazpitarano, baina çazpitan hiruroguey eta hamarretarano.

23 Halacotz da comparatu ceruëtaco resumá beré cerbitzariequin contu eguin nahi vkan duen regue batequin.

24 Eta contu eguiten hassi cenean, presenta cequión bat, hamar-milla talent hari çor ceraucanic.

25 Eta ceren harc ezpaitzuen nondic pága, mana ceçan haren iaunac sal ledin hura, eta haren emaztea, eta haourrac, eta cituen gauça guciac: eta *çorra* paga ledin.

26 Halacotz cerbitzari hunec bere buruä lurrera egotziric supplicatzen çuen hura, cioela, Iauna, auc patientia enegana, eta gucia pagaturen drauát.

27 Orduan compassione harturic cerbitzari haren iaunac, vtzi ceçan, eta çorra quitta cieçon.

28 Baina ilkiric cerbitzari hunec eriden ceçan bere cerbitzari quidetaric bat, ehun dinero çor ceraucanic: eta hura hatzamanic ithotzen çuen, cioela, Paga neçac çor duanaz.

29 Eta bere cerbitzari-quideac haren oinetara bere buruä egotziric othoitz eguiten ceraucan, cioela, Auc patientia enegana, eta gucia pa-

gaturen drauat.

30 Baina harc etzuen eguin nahi vkan, aitzitic ioanic eçar ceçan hura presoinean, çorra pagaliroeno.

31 Bada ikussiric haren cerbitzari-quidéc cer eguin içan cen, triste citecen haguitz: eta ethorriric declara cieçoten bere iaunari eguin içan cẽ gucia.

32 Orduan hura deithuric bere iaunac diotsa, Cerbitzari gaichtoá, çor hura gucia quittatu drauat, ceren othoitz eguin baitrautac:

33 Ez-auena hic-ere eure cerbitzari-quideaz pietate vkan behar, nic-ere hiçaz pietate vkan dudan beçala?

34 Orduan asserreturic bere iaunac sargeantey hura eman ciecén, hari çor ceraucan gucia paga lieçaqueono.

35 Hala ene Aita ceruëtan denac-ere eguinen drauçue çuey, baldin batbederac bere anayeri gogotic faltáç barka ezpadietzoçue.

## CAP. XIX.

*2 Eriac sendatu. 3, 7 Separationezco letrá. 12 Chikiratua. 13 Escuén impositionea. 14 Haur chipiac. 17 Manamenduén beguiratzea. 21 Perfect içatea. 23 Abratsac. 29 Gucia Christgatic vtzi duqueenaz.*

*Marc 10. 1* 1 * ETa guertha cedin, Iesus propos hauc acabaturic parti baitzedin Galileatic, eta ethor baitzedin Iudeaco bazterretara, Iordanaren berce al-

deaz.

2 Eta iarreiqui cequión gendetze handi, eta ſenda citzan han.

3 Orduan ethor citecen harengana Phariſeuac tentatzen çutela, eta cíotſatela, Vtzi ahal diro guiçonac bere emaztea eceinere cauſagatic?

4 Baina harc ihardeſtén çuela erran ciecén, Eztuçue iracurri * ecen Creaçaleac hatſetic eguin cituela arra eta emea? Gen.1.27.

5 Eta erran çuela, *Halacotz vtziren ditu guiçonac aita eta ama, eta iunctaturen çayó bere emazteari, eta içanen dirade biac haraguibat. Gen.2.24 1.cor.6.16. ephes.5.31

6 Bada guehiagoric eztirade biga, baina haraguibat. Beraz Iaincoac iunctatu duena, guiçonac ezteçala ſepara.

7 Diotſate, Cergatic beraz * Moyſeſec manatu vkan du ſeparationeco letraren emaitera, eta haren vtzitera? Deut.24.1

8 Dioſte, Moyſeſec çuen bihotzeco gogortaſſunagatic permettitu drauçue çuen emaztén vtzitera: baina hatſetic etzén hala.

9 * Eta erraitén drauçuet ecen norc-ere vtziren baitu bere emaztea, paillardiçagatic baicen, eta berce batequin ezconduren baita, adulterio iauquiten duela: eta vtzi denarequin ezconduren datenac adulterio iauquiten duqueela. Leben 5.32 marc 10.11 luc 16.18. 1.cor.7.11.

10 Diotſate bere diſcipuluéc, Baldin horlaco bada guiçonaren emaztearequilaco beharquia, eztuc on ezconcea.

11 Baina harc erran ciecén, Eztute guciéc ar-

diesten hitz haur, baina eman içan çayenée.

12 Ecen badirade chikiratuac amaren sabeletic hala iayo içan diradenac: eta badirade chikiratuac, guiçonéz chilkiratu içan diradenac: eta badirade chikiratuac ceruétaco resumagatic bere buruäc chikiratu vkan dituztenac. Har ahal deçanac, har beça.

*Leben 18.3 marc 10.13 luc 18.15.*

13 * Orduan haourtchoac presentatu içan çaizcan escuac gainean eçar lietzençat eta othoitz leguiançat: eta discipuluec mehatcha citzaten.

14 Baina Iesusec dioste, Vtzitzaçue haourtchoac, eta enegana ethortetic eztitzaçuela empatcha: ecen hunelacoén da ceruëtaco resumá.

15 Eta escuac gainean eçarri cerauzteneã, parti cedin handic.

*Marc 10.17 Luc 18.10.*

16 *Eta huná, cembeitec hurbilduric erran cieçón, Magistru oná, cer vngui eguinen dut vicitzé eternala dudançat?

17 Eta harc erran cieçón, Cergatic deitzen nauc on? eztuc nehor onic bat baicen, *eta hura*, Iaincoa: baldin vicitzean sarthu nahi bahaiz, beguiraitzac manamenduac.

*Exo. 20.13*

18 Diotsó, Cein? Eta Iesusec erran ceçan *Eztuchilen, Eztuc adulteraturen, Eztuc ebatsiren, Eztuc testimoniage falsuric erranen.

19 Ohoraitzac aita eta ama. Eta, Onhetsiren duc eure hurcoa eure buruä beçala.

20 Diotsó guiçon gazteorrec, Horiac guciac beguiratu citiat neure gaztetassunetic: cer oraino falta çait?

21 Diotsó Iesusec, Baldin perfect içan nahi ba-

haiz,oha, sal eçac duana, eta emã iecéc paubrey: eta vkanen duc thesaurbat ceruän:eta athor, arreit niri.

22 Eta ençun çuenean guiçon gazteorrec hitz hori,ioan cedin tristeric: ecen on hãdiac cituen.

23 Orduan Iesusec erran ciecén bere discipuluey, Eguiaz erraiten drauçuet,ecen abratsa nequez sarthuren dela ceruëtaco resumán.

24 Eta berriz diotsuet, errachago dela cablebat orratzaren chulhotic iragan dadin, ecen ez abratsa Iaincoaren resumán sar dadin.

25 *Gauça hauc* ençunic harẽ discipuluac spanta citecen haguitz, cioitela, Nor da beraz salua ahal daitenic?

26 Eta Iesusec *hetarat* behaturic, erran ciecén, Guiçonac baithã hori impossible da:baina Iaincoa baithan gauça guciac possible dirade.

27 *Orduan ihardesten çuela Pierrisec erran cieçón,Huná,guc vtzi citiagu gauça guciac, eta iarreiqui gaitzaizquic hiri: cer içanen da beraz gure?

*Marc 10. 28. Luc 18.28.*

28 Eta Iesusec erran ciecén, Eguiaz diotsuet, ecen çuec niri iarreiqui çaizquidatenóc,regenerationean iarriren denean guiçonaren Semea bere maiestatearen thronoan,*iarriren çaretela çuec-ere hamabi thronoén gainean, iugeatzen dituçuela Israeleco hamabi leinnuac.

*Luc 22.30*

29 Eta norc-ere vtzi baituque etcheric, edo anayeric, edo arrebaric, edo aita, edo ama, edo emaztea, edo haourric, edo landaric ene icenaren causaz,ehunetan hambat recebituren duela,

eta vicitze eternala heretaturen.

Berr.20.16. marc 10.31 luc 13.30. 30 *Baina anhitz lehen *diradenac*, içanen dirade azquen:eta azquenac,lehen.

## CAP. XX.

*1 Languileaç mahaſtira alocatzen. 15 Begui malignoa. 18 Bere paſſionea Ieſuſec aitzinetic declaratzen. 20 Zebedeoren emaztearen requeſtá. 28 Chriſt gure miniſtre eta redemptore. 30 Itſu bi arguitzen.*

1 ECen, comparatu da ceruëtaco reſumá aitafamilia batequin, cein ilki içan baita arguiaren beguian lãguile alocatzera bere mahaſticotzat.

2 Eta languilequin accordaturic dinero batetan eguneco,igor citzan bere mahaſtira.

3 Eta ilkiric hirur orenén inguruän,ikus citzan berce alfer ceuden batzu plaçán.

4 Eta erran ciecén, Çoazte çuec-ere *ene* mahaſtira,eta bide datena emanen drauçuet.

5 Eta hec ioan citecen. Berriz ilkiric ſey eta bedratzi orenén inguruän, eguin ceçan molde berean.

6 Eta hameca orenen inguruän ilkiric, eriden citzan berce alfer ceuden batzu,eta dioſte,Cergatic hemen çaudete egun gucian alfer?

7 Diotſate,Ceren nehorc ezpaiquaitu alocatu. Dioſte, Çoazte çuec-ere *ene* mahaſtira, eta bide datena recebituren duçue,

8 Eta arraſtu cenean, erran cieçón mahaſti iabeac bere recebidoreari. Dei itzac languileac, eta paga iecéc alocairuä, haſſiric azquenetaric lehenetarano.

9 Eta ethorri ciradenean hameca orenen inguruän *alocatuac* recebi ceçaten dinero bana.

10 Eta ethorriric lehenéc-ere, vſte vkan dute guehiago recebituren çutela: baina recebi ceçaten hec-ere dinero baná.

11 Eta recebitu çutenean, murmuratzen çuten aitafamiliaren contra,

12 Cioitela, Azquen hauc orembat eguin dié *lanean*, eta gure bardin eguin dituc, ekarri baitugu egunaren cargá, eta beroa.

13 Eta harc ihardeſten çuela hetaric bati erran cieçón, Adiſquideá, eztrauät hiri bidegaberic eguiten: ez aiz dinero batetã enequin accordatu?

14 Har eçac hire dena, eta habil: baina nahi diarocat azquen huni eman, hiri bay becembat.

15 Ala eznaiz haiçu nahi dudanaren eguitera neure onéz? ala hire beguia gaichto da, ceren ni on bainaiz?

16 *Hala içanen dirade azquenac, lehen: eta lehenac, azquen: *ecen anhitz dirade deithuac, baina guti elegituac.

Lehẽ 19.30 marc 10. 31. luc 13.30.

17 Eta Ieſuſec Ieruſalemera igaitean, har citzan hamabi diſcipuluac appart bidean, eta erran ciecén,

Ber. 22. 14

18 *Huná, igaiten gara Ieruſalemera, eta guiçonaren Semea liuraturen çaye Sacrificadore principaley eta Scribey, eta hura condemnatu-

Marc 10. 32. luc 18.31.

ren dute hiltzera:

Ioan 18.32 19 *Eta hura dute liuraturen Gẽtiley, eſcarnia, eta açota, eta crucifica deçatençat: baina hereneco egunean reſuſcitaturen da.

Marc 10. 35. 20 *Orduan ethor cedin harengana Zebedeoren ſemen amá bere ſemequin, gurtzen, eta cerbait eſcatzen çayola.

21 Eta harc erran cieçón, Cer nahi dun? Diotſó, Ordena eçac iar ditecen ene bi ſeme hauc, bata hire eſcuinean, eta bercea ezquerrean, hire reſumán.

22 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ceçan, Eztaquiçue ceren eſquez çaudeten: edan ahal diroçue nic edateco dudan copa? Eta batheya ahal çaitezquete ni batheyaturen naicen baptiſmoaz? Diotſote, Bay.

23 Orduan dioſte, Ene copá edanen baduçue, etá ni batheyaturen naicén baptiſmoaz batheya turen baçarete: baina ene eſcuineã edo ezquerrean iartea, ezta ene emaiteco, baina *emanen çaye* ene Aitaz appainduric dauẽney.

Marc 10. 41. luc 22.25. 24 *Eta *hura* ençunic *berce* hamarrac bekaitz citecen bi anayéz.

25 Ieſuſec bada hec beregana deithuric, dio, Badaquiçue ecen nationetaco princiéc ſeignoriatzen dutela hayen gainean: eta hãdiéc authoritatez vſatzen dutela hayén gaynean.

26 Ordea ezta hala içanen çuen artean: baina nor-ere handi nahi içanen baita çuen artean, biz çuen muthil:

27 Eta nor-ere nahi içanen baita çuen artean

lehen içan,biz çuen cerbitzari.

28 Hala nola guiçonarẽ Semea ezpaita ethorri cerbitzatu içatera, baina cerbitzatzera, eta bere viciaren rançoinetan anhitzengatic emaitera.

29 *Eta hec Iericotic partitzen ciradela, gendetze handi iarreiqui cequión.

*Marc 10. 46. luc 18.35.*

30 Eta huná,bi itsu bide bazterrean ceudenec, ençunic ecen Iesus iragaiten cela, oihu eguin ceçaten, cioitela, Auc pietate guçaz Dauid-en seme Iauná.

31 Eta gendetzeac mehatchatzen cituen hec ichil litecençát, baina hec oihu guehiago eguiten çutẽ, cioitela, Auc pietate guçaz Dauid-en seme Iauná.

32 Eta guelditurie Iesusec dei citzan, eta erran ceçan,Cer nahi duçue daguiçuedan?

33 Diotsote,Iauna,gure beguiac irequi ditecẽ.

34 Eta compassione harturic Iesusec hunqui citzan hayén beguiac:eta bertan ikustea recebi ceçatẽ hayén beguiéc, eta hari iarreiqui cequizquión.

## CAP. XXI.

*7 Christec Ierusalemen bere sartzea eguiten. 12 Saltzaleac eta erosleac templetic egoizten. 14 Eriac sendatzen. 16 Bere recebitzaleac sustẽgatzen. 19 Ficotzea eyhartzen. 22 Fedearen indarra orationean. 25 Ioannesen Baptismoa. 31 Iainçoaren vorondatea eguiten dutenac. 32 Iudu incredulac. 33 Mahasti alocairutan emanaren comparationea. 42 Har cantoin nabussia. 43 Iuduac iraizten, eta Gentilac recebitzen.*

*Marc 11.1. luc 19.29.*

1 *ETa Ierusaleme aldera ciradeneá, eta ethor citeceneá Bethphagera, Oliuatzetaco mendi aldera, orduan Iesusec igor citzan bi discipulu,

2 Erraiten cerauela, Çoazte çuen aurkaco burgura, eta bertan eridenen duçue asto emebat estecatua, eta vmebat harequin: lachaturic ekar ietzadaçue.

3 Eta baldin nehorc deus badarraçue, erraçue ecen Iaunac behar dituela: ecen bertan igorriren ditu hec.

4 Bada haur gucia eguin içan da Prophetáz erran cena compli ledinçát, cioela,

*Esa. 62.11. Zacha.9.9. ioan.12.15.*

5 *Erroçue Siongo alabari, Huná, eure reguea ethorten çain mansoric, eta asto emearen, eta vztarricoaren vme arraren gainean iarria.

6 Discipuluac bada ioan citecen, eta eguin ceçaten Iesusec ordenatu cerauën beçala.

7 Eta ekar citzaten astoa eta vmea, eta eçar citzaten hayén gainean bere abillamenduac, eta iar eraci ceçaten hayén gainean.

8 Eta gendetze handic heda citzaten bere abillamenduac bidean, eta bercéc adarrac piccatzen cituzten arboretaric, eta bidean hedatzen.

9 Eta aitzinean ioaiten eta iarreiquiten cen populua oihuz cegoen, cioela, Hosánna Dauid-en semeá: benedicatu *dela* Iaunaren icenean ethorten dena, Hosanna leku gorenetan *aicená*.

10 Eta sarthu cenean hura Ierusalemen, ciuitate gucia moui cedin, cioela, Nor da haur?

11 Eta populuac erraiten çuen, Haur da Iesus Propheta Galilean *den* Nazareteco.

12 *Eta sar cedin Iesus Iaincoren templean, eta egotz citzan campora * templean saltzen eta erosten ari ciraden guciac: eta cambiadorén mahainac itzul citzan, eta vsso colombác saltzen cituztenen cadiráe.

Marc 11. 11. luc 19.45. ioan 2.13. Deu.14.25

13 Eta dioste, Scribatua da, * Ene etchea, orationetaco etche deithuren da: * baina çuec hura gaichtaguin lece eguin duçue.

Esa.56.7. marc 7.11. luc 19.46. Iere.7.11.

14 Orduan ethor citecen harengana itsuac eta mainguác templean: eta senda citzan hec.

15 Baina ikussiric Sacrificadore principalée eta Scribéc *harc* eguin citue͂ miraculuac, eta haourraco oihuz ceudela templean, eta erraite͂ çutela, Hosanna Dauid-en semeá: gaitzi cequién.

16 Eta erran cieçoten, Badáçuc hauc cer dioitén? Eta Iesusec erra͂ ciecén, Bay: eztuçue egundano iracurri, * Haourrén eta edosquiten dutenén ahotic complitu vkan duc laudorioa.

Psal.8.3.

17 Eta hec vtziric, ilki cedin hiritic campora Bethaniarat: eta ostatu har ceçan han.

18 Eta goiceá hirirát itzultze͂ cela, gosse cedin.

19 *Eta ikussiric ficotzebat bidearen gainean, ethor cedin hartara, eta etzeçan deus hartan eriden hostoric baicen: eta diotsa, Guehiago fructuric hireganic sor eztadila seculan. Eta eyhar cedin bertan ficotzea.

Marc 11. 13.

20 Eta hori ikussiric discipuluéc mirets ceçaten, cioitela, Nolatan bertan eyhartu içan da ficotzea?

21 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén, Eguiaz erraiten drauçuet, baldin fede baduçue, eta duda ezpadeçaçue, ez ſolament ficotzeari *eguin içan çayona* eguinen duçue, baina are baldin mendi huni badarroçue, Khen adi, eta iraitz adi itſaſſora eguinen da.

Lehen 7.7. Marc 11. 24. ioan 15.7. 1.ioã 3.22. marc 11. 27. luc 20.1.

22 *Eta cerere galde eguinen baituçue orationean ſinheſten duçuela, recibituren duçue.

23 *Eta ethorri cenean templera, Sacrificadore principalac eta populuco Ancianoac, hura iracaſten ari cela, ethor citecen harengana, cioitela, Cer authoritatez gauça horiac eguiten dituc? eta norc hiri eman drauc authoritate hori?

24 Ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén, Interrogaturen çaituztet nic-ere çuec gauça batez, cein badarradaçue nic-ere erranen drauçuet, cer authoritatez gauça hauc eguiten ditudan.

25 Ioanneſen Baptiſmoa nondic cen? cerutic ala guiçonetaric? Eta hec baciharducaten berac baithan, cioitela, Baldin erran badeçagu, Cerutic: erranen draucu, Cergatic bada hura eztucue ſinhetſi?

26 Eta baldin badarragu, Guiçonetaric: beldur gara communaren: * ecen guciéc daducate Ioannes Prophetatan.

Lehen 14.5 marc 6.20.

27 Eta ihardeſten ceraucotela Ieſuſi, erran ceçaten, Etzeaquiagu. Erran ciecén harc-ere, Eztrauçuet nic-ere erraiten cer authoritatez gauça hauc eguiten ditudan.

28 Baina cer irudi çaiçue, Guiçon batec cituen bi ſeme: eta hurbilduric lehenagana, errã ceçan,

Semé

Semé habil,egun trabailla adi ene mahaſtian:

29 Harc ihardeſten çuela erran ceçan, Eztiat nahi:baina guero vrriquituric,ioan cedin.

30 Guero hurbilduric berceagana, erran cieçón halaber. Eta harc ihardeſten çuela erran ceçan,Ni *nihoac* iauna,Eta etzedin ioan.

31 Bi hautaric ceinec eguin çuen *bere* aitaren vorondatea?Diotſate,Lehenac. Dioſte Ieſuſec, Eguiaz erraiten drauçuet ecen publicanoac eta paillardác aitzincen çaizqui çuela Iaincoaren reſumara.

32 Ecen ethorri da Ioannes çuetara iuſtitiazco bideaz, eta eztuçue hura ſinhetſi: baina publicanoéc eta paillardéc ſinhetſi vkan dute: eta çuec *hori* ikuſſiric, etzaretè emendatu guero, haren ſinheſtera.

33 *Berce cõparationebat ençuçue. Cen aita-familiabat, ceinec landa baitzeçan mahaſtibat, eta hura heſsiz ingura baitzeçan, eta hartan hobibat eguin ceçan lacotzát, eta edifica ceçan dorrebat, eta aloca ciecén laborariey : eta camporat ioan cedin.

*Marc 12.1 luc 20.9. eſa.5.1,5. iere.2.21.*

34 Bada fructuén ſaſoina hurbildu cenean,igor citzan bere cerbitzariac laborarietara, fructuén recebitzera.

35 Eta laborariéc harturic haren cerbitzariac, bata çaurt ceçaten,eta bercea hil, eta bercea lapida.

36 Berriz igor ceçan berce cerbitzariric lehenac baino guehiago, eta hæi halaber eguin ciecén.

37 Azquenean igor ceçan hetara bere ſemea, erraiten çuela, Ondraturen dute ene ſemea.

38 Baina laborariéc ikuſſiric ſemea erran ceçaten bere artean, *Haur da primua, çatozte, hil deçagun haur, eta gatchetzan hunen heretageari.

Berr.26.3, eta 27.2. ioan 11.53.

39 Eta harturic hura iraitz ceçaten mahaſtitic campora, eta hil ceçaten.

40 Dathorrenean bada mahaſti iabeac cer eguinen drauë laborari hæy?

41 Diotſate, Gaichto hec gaizqui deſeguinen: eta bere ſaſoinean fructuac renda dietzoyoten berce laborariri bere mahaſtia alocaturen.

42 Dioſte Ieſuſec, Egundano eztuçue iracurri Scripturetã, * Edificaçaléc arbuyatu duten harria cantoin buru eguin içan da: Haur Iaunaz eguin içan da, eta da gauça miragarria gure beguién aitzinean?

Eſa.28.16. pſal. 118. 22. act.4.11. rom.9.33. 1.pier.2.7.

43 Halacotz diotſuet ecen edequiren çaiçuela Iaincoaren reſumá, eta emanen çayola, hartaco fructuac eguinen dituen populuari.

44 Eta harri haren gainera eroriren dena, çathicaturen da: eta noren gainera eroriren baita, hura dú chehaturen.

45 Eta ençun citzatenean Sacrificadore principaléc, eta Phariſeuéc haren comparationeac, eçagut ceçaten ecen heçaz minço cela.

46 Eta hatzaman nahi çutelaric, populuaren beldur içan ciraden, ceren Propheta beçala hura baitzaducaten.

CAP. XXII.

*2 Ezteyén comparationea. 9 Gentilen vocationea. 11 Ezteyetaco arropá. 17 Tributác nori emaiteco. 23 Resurrectioneaz Christ interrogatzen. 32 Iaincoa, vicién Iainco. 36 Legueco manamendu handia. 37 Iaincoaganatco eta hurcoaganatco amorioa. 41 Iesusec Phariseuac Christez interrogatzen.*

1 ORduan Iesus ihardesten çuela, berriz minça cequién comparationez, cioela.
2 * Comparatu da ceruëtaco resumá, bere semearen ezteyac eguin cituen regue batequin.

*Luc 14.16. apoc. 19.9.*

3 Eta igor citzan bere cerbitzariac ezteyetara gomitatuén deitzera: baina etziraden ethorri nahi içan.
4 Berriz igor ceçan berce cerbitzariric, cioela, Erreçue gomitatuey, Huná, appreftatu dut neure barazcaria, ene cecenac eta haraquey guicenduac haraqueitatu dirade, eta gucia prest da: çatozte ezteyetara.
5 Baina hec conturic eguin gabe ioan citecen: bata bere bordarat, eta bercea bere merkatalgoarát.
6 Eta bercéc hatzamanic haren cerbitzariac iniuria eta hil citzaten.
7 Eta regue ençunic *hori* asserré cedin: eta igorriric bere gendarmesac, deseguin citzan guicerhaile hec, eta hayen hiria erra ceçan.
8 Orduan dioste bere cerbitzariey, Ezteyac prest badirade, baina gomitatu ciradenac, ezti-

rade digne içan.

9 Çoazte bada bide cantoinetara,eta eridenen dituçuen guciac dei itzaçue ezteyetara.

10 Eta cerbitzari hec ilkiric bidetara,bil citzaten eriden cituzten guciac, hambat gaichtoac nola onac:eta bethe cedin ezteyén lekua, mahainean iarriric ceudenéz.

11 Eta ſarthu cenean regue mahainean iarriric ceudenén ikuſtera, ikus ceçan han guiçombat eztey arropaz veztitua etzenic.

12 Orduan diotſa, Adiſquideá, nola huna ſarthu aiz eztey arropá eztuala?Eta ahoa boça cequión.

13 Orduan erran ciecén reguec cerbitzariey, Oinetan eta eſcuetan eſtecaturic, ken eçaçue, eta egotzaçue campoco ilhumbera:* han içanē da nigar eta hortz garraſcots.

*Leben 8.12 eta 13 42. berr. 25.30*

14 Ecen anhitz dirade deithuac,eta guti elegituac.

15 *Orduan appartaturic Phariſeuéc conſeillu har ceçatē nola hura hatzaman liroiten hitzean.

*Marc 12. 13. luc 20. 20.*

16 Eta igorten dituzte harengana bere diſcipuluac Herodianoequin, dioitela, Magiſtruá, baceaquiagu eguiati aicela, eta Iaincoaren bidea eguiazqui iracaſten duála, eta nehoren anſiaric eztuála: ecen ezago guiçonén apparentiara behá:

17 Erraguc bada,cer irudi çaic?bidezco da Ceſari tributaren emaitea,ala ez?

18 Eta eçaguturic Ieſuſec hayen malitiá, dio, Cergatic tentatzen nauçue hypocritac?

19 Eracuſtaçue tributeco monedá. Eta hec preſenta cieçoten dinerobat.
20 Eta erraiten draue, Norena da imagina haur eta ſcribua?
21 Diotſate, Ceſarena. Orduan erraten draue, *Renda ietzoçue beraz Ceſaren diradenac, Ceſari: eta Iaincoaren diradenac, Iaincoari. *Rom.13.7.*
22 Eta *hori* ençunic, mirets ceçaten: eta hura vtziric ioan citecen.
23 *Egun hartan ethor citecen harẽgana Sadduceuac, *reſurrectioneric eztela dioitenac, eta interroga ceçaten, *Marc 12. 18. luc 20. 27. Act.26. 8.*
24 Cioitela, Magiſtruá, Moyſeſec erran dic, *Baldin norbeit hil bada haourric vkan gabe, haren anayeac aliançagatic harturen du haren emaztea, eta leinu eguinẽ drauca bere anayeri. *Deut.25.5*
25 Eta cituán gure artean çazpi anaye: eta lehena ezconduric hil ciedián: eta leinuric etzuenaren gainean, vtzi cieçoan bere emaztea bere anayeri.
26 Eta halaber bigarrenac eta hirurgarrenac, çaz pigarrenerano.
27 Eta gucién ondoan hil ciedián emaztea-ere.
28 Reſurrectionean bada, çazpietaric ceinen emazte içanen da? ecen guciéc vkan dié hura.
29 Eta ihardeſten duela Ieſuſec dioſte, Huts eguiten duçue Scripturác eta Iaincoaren verthutea iaquin gabez.
30 Ecen reſurrectionean eztu nehorc emazteric hartzen ez emaiten ezconçaz: baina dirade Iaincoaren Aingueruäc ceruän beçala.

31 Eta hilén resurrectioneaz den becembatean, eztuçue iracurri cer Iaincoaz erran içan çaiçuen, dioela,

Exod.3.6. marc 12. 26.

32 *Ni naiz Abrahamen Iaincoa, eta Isaac-en Iaincoa, eta Iacob-en Iaincoa? Iaincoa, ezta hilén Iaincoa, baina viciena.

33 Eta *hori* ençunic gendetzeac spanta citecen haren doctrináz.

Marc 12. 28.

34 * Phariseuac bada, ençunic ecen Sadduceuac ichildu cituela, bil citecen elkargana.

35 Eta interroga ceçan hetaric batec, Legueco doctorac, tentatzen çuela hura, eta cioela,

36 Magistruá, cein da manamendu handia Leguean?

Deut.6.5. luc 10.27.

37 Eta Iesusec erran cieçón, * Onhetsiren duc eure Iainco Iauna eure bihotz guciaz, eta eure arima guciaz, eta eure pensamendu guciaz.

38 Haur duc manamendu lehena eta handia.

Leui.19.18 marc 12. 31.

39 Eta bigarrenac hura irudi dic, *Onhetsiren duc eure hurcoa eure buruä beçala.

40 Bi manamendu hautaric Legue gucia eta Prophetác dependitzen dituc.

Marc 12. 55. luc 20.41.

41 *Eta bildu ciradenean Phariseuac, interroga citzan Iesusec,

42 Cioela, Cer irudi çaiçue Christez? noren seme da? Diotsate, Dauid-en.

43 Eta dioste, Nola beraz Dauid-ec Spirituz deitzen du hura Iaun? dioela,

Psal.110.1

44 *Erran drauca, Iaunac ene Iaunari, Iar adi ene escuinean, eçar ditzaquedano hire etsayac hire oinén scabella.

45 Beraz baldin Dauid-ec deitzen badu hura Iaun, nola da haren seme?

46 Eta nehorc ecin ihardets cieçoyon hitzic: ez nehor etzequión ventura guehiagoric egun harçaz harat interrogatzera.

## CAP. XXIII.

*2 Iracastunetaric cer hartu behar den. 4 Carga piçuén emaiteaz. 5 Phariseuéc cergatic obrác eguiten. 8 Doctor bakoitza Christ. 9 Iaincoa guré Aita. 10 Doctorac. 13 Ceruëtaco resumaren erstea. 16 Templeaz iuratzea. 23 Mentaren detchematzea. Iugemendua. Misericordia. 27 Sepulchre churituac. 31 Iuduec hil Prophetác. 36 Iuduén destructionea.*

1 ORduan Iesus minça cequien gendetzey eta bere discipuluey.

2 Cioela, * Moysesen cadirán iarten dirade Scribác eta Phariseuac: *Esdr.8.4.*

3 Cerere bada erranen baitrauçue beguira deçaçué, beguira eçaçue eta eguiçue: baina hayén obrén araura eztaguiçuela: ecen erraiten duté, eta ez eguiten.

4 * Ecen carga piçuac eta iassan ecin daitezquenac biltzen dituzté, eta eçarten guiçonén soinetara: baina bere erhiaz hunqui nahi eztituzté. *Luc 11.46 act.15.10.*

5 Eta bere obra guciac eguiten dituzté guiçonéz ikus ditecençát: ecen çabaltzen dituzté

*Deut.6.8, eta 22.12. nom.15.38* bere * philacterioac, eta luçatzen dituzté bere veztimendetaco bazterrac.

*Marc 12. 38. luc 11.43, eta 20.46.* 6 *Eta on darizté lehen placey banquetetan, eta lehen cadirey ſynagoguetan,

7 Eta ſalutationey merkatuetan, eta guiçonéz deithu içateari Magiſtruá, Magiſtruá.

8 Baina çuec etzaiteztela dei Magiſtru: ecen bat da çuen doctora, Chriſt: eta çuec gucioc, anaye çarete.

† *Mala.1.6.* 9 *Eta çuen aita ezteçaçuela nehor dei lurrean: ecen bat da çuen Aita, ceruëtan dena.

10 Eta etzaiteztela dei doctor: ecẽ bat da çuen doctora, Chriſt.

11 Baina çuen artean handién dena, biz çuen cerbitzari.

*Luc 14.11, eta 18.14.* 12 *Ecen bere buruä goraturen duena, beheraturen da: eta bere buruä beheraturen duena, goraturen da.

13 Baina maledictione çuen gainean Scriba eta Phariſeu hypocritác: ceren erſten baituçue ceruëtaco reſumá guiçonén aitzinean: ecẽ çuec etzarete ſartzen, eta ſartzen diradenac eztituçue vtziten ſartzera.

*Marc 12. 40. luc 20.47.* 24 *Maledictione çuen gaineã Scriba eta Phariſeu hypocritác, ecen ireſten dituçue *ema* alhargunén etcheac, are luçaqui othoitz eguin irudiz: halacotz duçue condemnatione handiagoa recebituren.

15 Maledictione çuen gainean Scriba eta Phariſeu hypocritác, ecen itſaſſoa eta leihorra ingu-

ratzen dituçue proſelytobat daguiçuençát, eta eguin denean, gehennaco ſeme eguiten duçue dobláz ceuroc baino areago.

16 Maledictione çuen gainean guidari itſuác, ceinéc baitioçue, Norc-ere iuraturen baitu templeaz, ezta deus: baina norc-ere iuraturen baitu templeco vrrheaz, çordun da.

17 Erhoác eta itſuác, cein da handiago vrrhea, ala vrrhea ſanctificatzen duen templea?

18 Eta *erraitẽ duçue*, norc-ere iuraturen baitu aldareaz, ezta deus: baina norc-ere iuraturen baitu haren gaineã den oblationeaz, çordun da.

19 Erhoác eta itſuác, cein da handiago oblationea, ala oblationea ſanctificatzẽ duen aldarea?

20 Beraz aldareaz iuratzen duenac, iuratzen du harçaz, eta haren gainean diraden gauça guciéz.

21 *Eta norc-ere iuratzen baitu templeaz, iuratzen du harçaz, eta hartan habitatzen denaz. 1.*Reg.*8.13 2.*chro.*6.2.

22 Eta iuratzen duenac ceruäz, iuratzen du Iaincoaren thronoaz eta haren gainean iarriric dagoenaz.

23 *Maledictione çuen gainean Scriba eta Phariſeu hypocritác: ecen detchematzen dituçue menta eta aniſa eta cuminoa, eta vtziten dituçue Legueco gauça piçuagoac, *hala nola*, iugemendua eta miſericordia eta leyaltatea: gauça hauc eguin behar ciraden, eta hec ez vtzi. *Luc* 11.42.

24 Guidari itſuác, eltzoa iraztén duçue: eta camelua ireſten.

25 *Maledictione çuen gainean Scriba eta Pha- *Luc* 11.39.

riſeu hypocritác: ecen coparen eta plataren cãpoco aldea chahutzen duçue: baina barnetic dirade arrauberiaz, eta eceſſez betheac.

26 Phariſeu itſuá, chahu eçac lehenic coparen eta plataren barnecoa, hayén cãpocoa-ere chahu dadinçát.

27 Malediĉtione çuen gainean Scriba eta Phariſeu hypocritác: ecen ſepulchre churituac irudi duçue, hec campotic eder eracuſten dirade: baina barnetic hilén heçurrez eta ſatſutaſſun oroz betheac dirade.

28 Halaber çuec-ere campotic guiçoney eracuſten çarete iuſto, baina barnean hypocriſiaz eta iniquitatez betheac çarete.

29 Malediĉtione çuen gainean Scriba eta Phariſeu hypocritác: ecen Prophetén ſepulchreac edificatzen dituçue, eta iuſtoén monumentac ornatzen.

30 Eta dioçue, Baldin gure aitén egunetan içan baguina, ez quinén hayén lagun içanen Prophetén odolean.

31 Halatan teſtificatzen duçue ceurón buruén contra, ecen Prophetác hil dituztenén ſeme çaretela.

32 Çuec-ere betha eçaçue çuen aitén neurria.

33 Sugueác, vipera caſtác, nola itzuriren çaizquiote gehennaco iugemenduari?

34 Halacotz huná, nic igorten ditut çuetara Prophetác eta Çuhurrac eta Scribác eta hetaric *batzu* hilen dituçue eta crucificaturen: eta hetaric batzu açotaturen dituçue çuen ſynagogue-

tan, eta persecutaturen hiritic hirira:

35 Dathorrençát çuén gainera lurrarē gaineā issuri içan den odol iusto gucia, *Abel iustoaren odoletic, Zacharia Barachiaren semearen odoleranocoa, cein hil vkan baituçue templearen eta aldarearen artean.

Gen.4.8. Heb.11.4.

36 Eguiaz diotsuet, ethorrico dirade gauça hauc guciac natione hunen gainera.

37 *Ierusalem, Ierusalem, Prophetác hiltzen eta hiregana igorriac lapidatzen dituaná, cembatetan bildu nahi vkan ditut hire haourrac, oilloac bere chitoac hegalen azpira biltzen dituen beçala, eta ezpaituc nahi vkan?

Luc 13.34. 4.esd.1.30

38 Horrá, gueldiţzen çaiçue çuen etchea desert.

39 Ecen badiotsuet, eznauçue ikussirē hemēdic harát derraqueçueno, Benedicatu *dela* Iaunaren icenean ethorten dena.

## CAP. XXIIII.

*2, 15 Induén destructionea. 3 Christen aduenimendua. 5, 24 Christ falsuac. 6, 29 Munduaren fineco signoac. 12 Iniquitatea, Charitatea. 13 Perseueraturen duena. 14 Euangelioaren predicationea. 31 Ainguerués bilduren elegituac. 32 Ficotzearen comparationea. 35 Iaincoaren hitza eguiazco. 37 Noeren egunac. 39 Dilubioa. 42 Veillatzeco. 43 Gauazco ohoina. 45 Cerbitzari leyala. 48 Cerbitzari gaichtoa*

Marc 13.1. luc 21.5.

1 * ETa templetic ilkiric Iesus retiratzen cen: eta hurbildu içan çaizcan bere discipuluac templeco edificioén hari eracustera.

2 Eta Iesusec erran ciecén, Eztacusquiçue gauça hauc guciac? eguiaz erraiten drauçuet,* ezta guelditiuren hemen harria harriaren gainean, deseguin eztadin.

Luc 19.44.

3 Eta hura iarriric cegoela Oliuatzetaco mendi gainean, ethor cequizquión discipuluac appart, cioitela, Erraguc, noiz gauça hauc içanen dirade? eta cer signo hire ethortearenic eta munduaren finarenic *içanen da?*

Ephes. 5.6. colos. 2.18.

4 Eta ihardesten çuela Iesusec errã ciecén, *Beguirauçue nehorc seduci etzaitzaten.

5 Ecen anhitz ethorriren dirade ene icenean, erraiten dutela, Ni naiz Christ: eta anhitz seduciturен duté.

6 Eta ençunen dituçue guerlác eta guerla hotsac: beguirauçue trubla etzaitezten: ecen gauça *hauc* guciac eguin behar dirade, baina ezta oraino içanen fina.

7 Ecen altchaturen da nationea nationearen contra, eta resumá resumaren contra: eta içanẽ dirade içurriteac, eta gosseteac, eta lur ikaratzeac lekutic lekura.

8 Baina hauc guciac dolore hatseac *dirade.*

Lebẽ 10.17 luc 21.12. ioan. 15.20 eta 16.2.

9 * Orduan liuraturen çaituzte afflictionetara, eta hilen çaituzte, eta gende guciéz gaitz etsiac içanen çarete ene icenagatic.

10 Eta orduan ſcandalizaturen dirade anhitz, eta batac bercea tradituren du, eta batac bercea gaitzetſiren du.

11 Eta anhitz propheta falſu altchaturen dirade eta ſeducituren dute anhitz.

12 Eta ceren multiplicaturē baita iniquitatea, hozturen da anhitzen charitatea.

13 Baina norc perſeueraturen baitu finerano, hura ſaluaturen da.

14 Eta reſumaco Euangelio haur predicaturen da mundu vniuerſoan, natione guciey teſtimoniagetan: eta orduan ethorrico da fina.

15 * Dacuſſaçuenean bada deſolationearē abominationea,* Daniel prophetáz erran içan dena, leku ſainduan dagoela(iracutzen duenaç adi beça)

*Marc 13. 14. luc 21. 20. Dan.9.27.*

16 Orduan Iudean *diratenéc*, ihes albeileguite mendietarát:

17 Eta etche gainean *datena*, ezalbeiledi iauts deuſen bere etchetic eramaitera:

18 Eta landán *datena*, ezalbeiledi guibelerat itzul bere abillamenduén hartzera.

19 Dohain-gaitz emazte içorrén eta eredoſquiten duqueitenén egun hetan.

20 Othoitz eguiçue bada çuē ihes eguitea eztén neguän,* ezeta Sabbath *egunean*.

*Act.1.12.*

21 Ecen tribulatione handia orduan içanen da, nolacoric ezpaita içan munduarén hatſetic oraindrano, ez içanen.

22 Eta baldin laburtu içan ezpalirade egū hec nehor ſalua ezlaite, baina elegituacgatic, egun

hec laburturen dirade.

Marc 13.21 luc 17.23. 23 Orduan baldin nehorc badarraçue,* Huná hemen Christ, edo han: ezalbeitzineçate sinhets.

24 Ecen altchaturen dirade christ falsuac, eta propheta falsuac, eta eguinen duté signo handi eta miraculu: bay-possible baliz, eleguitué-ere seducigarri.

25 Huná, aitzinetic erran drauçuet.

26 Beraz baldin nehorc erran badieçaçue, Hará, desertuã da, etzaiteztela ilki, Hará, gambratchoetan *da:* ezteçaçuela sinhets.

27 Ecen hala nola chistmista ilkiten baita Orientetic, eta eracusten Occidenterano: hala içanen da guiçonaren Semearen ethorteа-ere.

Luc 17.37. 28 * Ecen non-ere içanen baita sarrasquia, hara bilduren dirade arranoac-ere.

Marc 13.24. eze.32.7. esa.13.10 ioel 2.31. eta 3.15 29 * Eta bertan egun hetaco tribulationearen ondoan, iguzquia ilhunduren da, eta eztu emanen ilharguiac bere erguia, eta içarrac eroriren dirade cerutic, eta ceruëtaco verthuteac ikaraturen dirade.

30 Eta orduan aguerturen da guiçonaren Semearen signoa ceruän: eta orduan plaigniturен dirade lurreco leinu guciac, * eta ikussiren dute

Apoc.1.7. guiçonaren Semea datorquela ceruco hodeyetan bothere eta gloria handirequin.

1 Cor.15.51 1.thes.4.6. 31 * Eta igorriren ditu bere Aingueruäc trompetta soinu handirequin, eta bilduren dituzte haren elegituac laur haicetaric, ceruën bazter batetic hayén berce bazterrererano.

32 Bada ficotzétic ikas eçaçue comparationea, ia haren adarra ninicatzen denean eta hostatzen, badaquiçue vdá hurbil dela.

33 Hala çuec-ere dacusquiçuenean gauça hauc guciac, albeitzinequite écen borthan hur bil datela.

34 Eguiaz erraiten drauçuet, eztela iraganen mende haur, gauça hauc gucioc eguin daitezqueno.

35 * Ceruä eta lurra iraganen dirade, baina ene hitzac eztirade iraganen. Marc13.31

36 Baina eguñ harçaz eta orenaz den becembatean, nehorc eztaqui, ez ceruëtaco Aingueruëc-ere, ene Aitac berac baicen.

37 Baina nola *baitziraden* Noeren egunac, hala içanen da guiçonaren Semearē ethortea-ere.

38 * Ecen hala nola dilubioaren *aitzineco* egunetan iaten baitzuten eta edaten, ezconcen baitziraden eta ezconçaz emaiten, Noe arkán sar cedin egunerano. Luc 17. 26

39 Eta ezpaitzeçaten eçagut dilubioa ethor cedino, eta guciac eraman citzaqueeno: hala içanen da guiçonaren Semearen ethortea-ere.

40 * Orduan biga içanen dirade landán: bata recebituren da, eta bercea vtziren. Luc 17.36.

41 Bigüec ehoren dute errotán: bata recebituren da, eta bercea vtziren.

42 * Veilla eçaçue bada, ecen eztaquiçue cer orduz çuen Iauna ethorteco den. Marc 13. 33

43 * Eta hura iaquiçue, ecen baldin baleaqui aitafamiliác cein goait aldiz ohoina ethor lei- Luc 12.39. 1.thes.5.2. apo.16.15

ten, veilla liroela, eta ezliroela bere etchea çulhatzera vtzi.

44 Halacotz çuec-ere çaudete prest: ecen vste eztuçuen orduan guiçonaren Semea ethorriren da.

45 * Eta cein da cerbitzari leyala eta çuhurra, nabussiac muthillén compainiaren gaineco eçarri duena, hæy demborán vitança deyençat?

Luc 12.42.

46 Dohatsu *da* cerbitzari hura bere nabussiac dathorrenean, hala eguiten eridenen duena.

47 Eguiaz erraiten drauçuet, ecen bere on guzién gaineco hura eçarriren duela.

48 Bada baldin erran badeça cerbitzari gaichto harc bere bihotzean, Luçatzen du ene nabussiac ethortera:

49 Eta has badadi cerbitzari lagunén cehatzé, eta iaten eta edaten hordiequin:

50 Cerbitzari haren nabussia ethorriren dá harc vste eztuen egunean, eta eztaquian orenean:

51 Eta bereciren du hura, eta hypocriten contuan eçarriren: * han içanen da nigar eta hortz garrascots.

Lehen 13 42. Berriz 25. 30

CAP. XXV.

1 *Hamar virginác.* 13 *Veillatzeco.* 15 *Cerbitzariey eman içan çaizten talentac.* 18, 24 *Cerbitzari gaichtoa.* 31 *Azquen iudicioa.* 34 *Iaincoaren benedicatuac.* 35 *Misericordiazco obrác.* 41 *Maradicatuac.*

1 ORduan comparaturen da ceruëtaco reſumá hamar virgina bere lã-pác harturic ſpoſoaren aitzinera ilki diradene-quin:

2 Eta hetaric borçac ciraden çuhur, eta borçac erho.

3 Erhoéc, bere lampén hartzean, etzeçaten har olioric berequin.

4 Baina çuhurréc har ceçaten olio bere vncietan bere lampequin.

5 Eta nola ſpoſoac ethortera berancen baitzuen, guciac logale citecen, eta loac har citzan.

6 Eta gau-herditã oihu eguin cedin, Huná, ſpoſoa heldu da, ilki çaitezte haren aitzinera.

7 Orduan iaiqui citecen virgina hec guciac, eta appain citzaten bere lampác.

8 Eta erhoéc çuhurrey erran ciecén, Iguçue çuen oliotic: ècen gure lampác iraunguiten dirade.

9 Baina ihardets ceçatẽ çuhurrec, cioitela, Ez, beldurrez aſco eztugun gure eta çuen: baina aitzitic çoazte ſaltzen dutenetara, eta eroſſaçue ceurondaco.

10 Eta hec eroſtera ioaiten ciradela, ethor cedin ſpoſoa: eta preſt ciradenac ſar citecen harequin ezteyetara, eta erts cedin borthá.

11 Guero bada ethortẽ dirade berce virginac ere dioitela, Iauna, iauna, irequi ieçaguc.

12 Baina harc ihardeſten duela, dio, Eguiaz di-

otſuet, etzaituztet eçagutzen.

Leben 24. 43. marc 13 33 Luc 19.12.

13* Veilla eçaçue bada: ecen eztaquiçue gui çonaren Semea ethorriren den eguna ez orena.

14* Ecen *gauça haur* gui çombat beçala *da*, ceinec lekorerat ioaitean dei baitzitzan bere cerbitzariac, eta bere onac eman baitzietzén.

15 Eta batari eman cietzón borz talẽt, eta berceari biga, eta berceari bat: batbederari bere anciaren araura: eta ioan cedin lekorrerat bertã.

16 Eta ioan cedin borz talentac recebitu cituena, eta traffica ceçan heçaz, eta eguin citzan berce borz talent.

17 Halaber biga *recebitu* cituenac-ere, irabaz citzan berce biga.

18 Baina bat recebitu çuenac ioanic aitzur ceçan lurrean, eta gorde ceçan bere nabuſſiaren diruä.

19 Eta dembora handiaren buruän ethorten da cerbitzari hayén nabuſſia, eta contu eguiten du hequin.

20 Orduan ethorriric borz talentac recebitu cituenac preſenta cietzón berce borz talent, cioela, Nabuſſiá, borz talent eman drauzquidac, huná; berce borz talent irabaci citiat heçaz.

21 Erran cieçón bere nabuſſiac, Vngui, cerbitzari oná eta leyalá: gauça gutian içan aiz leyal, anhitzaren gaineco eçarriren aut: ſar adi eure nabuſſiaren alegrançan.

22 Guero ethorriric bi talentac recebitu cituenac-ere diotſa, Nabuſſiá, bi talent emã drauzquidac, huná, berce biga irabaci citiat heçaz.

23 Erran cieçón bere nabussiac, Vngui, cerbitzari oná eta leyalá, gutiaren gainean içan aiz leyal, anhitzaren gaineco eçarriren aut: sar adi eure nabussiaren alegrançán.

24 Baina ethorriric talentbat recebitu çuenaçere diotsa, Nabusiá, eçagutzen nián ecen guiçon gogorra incela, erein eztuán lekuan biltzen duala, eta barreyatu eztuán lekuan elkarganatzen duala.

25 Hunegatic beldurrez ioanic gorde diát hire talenta lurrean: huná, baduc eurea.

26 Eta ihardesten çuela bere nabusiac erran cieçón, Cerbitzari gaichtoá eta lachoá, bahaquian ecen biltzen dudala erein eztudan lekuã: eta elkarganatzẽ dudala barreyatu eztudã lekuã

27 Beraz behar erauën emã ene diruä cambiadorey, eta ethorriric nic recebitu bainuqueen neurea lucururequin.

28 Edequi eçoçue bada huni talenta, eta emoçue hamar talentac dituenari.

29 * Ecen duen guciari emanen çayó, eta hambat guehiago vkanen du: baina deus eztuenari, duena-ere edequiren çayó.

*Lebẽ 13.12 marc 4. 25 luc 8.18. eta 19.26.*

30 Eta cerbitzari alferra * egotzaçue lekoreco ilhũbera: hã içanẽ da nigar eta hortz garrascots.

*Leben 8.12 eta 22.13.*

31 Bada guiçonaren Semea dathorrenean bere glorián, eta Aingueru saindu guciac harequin, orduan iarriren da bere gloriaren thronoã

32 Eta bilduren dirade harẽ aitzinera natione guciac, eta berecirẽ ditu batac bercetaric, artzainac ardiac akerretaric beretzen dituen beçala.

33 Eta eçarriren ditu ardiac bere eſcuinean, eta akerrac bere ezquerrean.

34 Orduan erranen draue Reguec bere eſcuinecoey Çatozte ene Aitaren benedicatuác, hereta eçaçue munduaren fundationetic preparatu çaiçuen reſumá.

Eſa.58.7
Ezech.18.7

35 *Ecen goſſe içan naiz eta eman drautaçue iatera: egarri içan naiz, eta eman drautaçue edatera: arrotz nincen, eta recebitu nauçue,

Eccleſ.7.39

36 Billuci, eta veztitu nauçue: * eri, eta viſitatu nauçue: preſoindeguian nincén, eta enegana ethorri içan çarete.

37 Orduan ihardetſiren draucate iuſtoéc, dioitela, Iauna, noiz ikuſſi augu goſſeric, eta bazcatu augu: edo egarriric eta edatera emã drauagu?

38 Eta noiz ikuſſi augu arrotz, eta recebitu augu? edo billuci, eta veztitu augu?

39 Edo noiz ikuſſi augu eri, edo preſoindeguian eta ethorri gara hiregana?

40 Eta ihardeſten duela Reguec erranen draue, Eguiaz diotſuet, ene anaye chipién hautaric bati eguin draucaçuen becembatean niri eguin drautaçue:

Pſal.6.9.
Lehen 7.23
Luc 13.27.

41 Orduan erranen draue ezquerrecoy-ere, *Maradicatuác, parti çaitezte eneganic ſeculaco ſura, deabruari eta haren aingueruëy preparaturic dauenera.

42 Ecen goſſe içan naiz, eta eztrautaçue eman iatera: egarri içan naiz, eta eztrautaçue eman edatera.

43 Arrotz nincén, eta eznauçue recebitu: bil-

luci,eta eznauçue veztitu:eri eta presoindeguiá, eta eznauçue visitatu.

44 Orduan hec-ere ihardetsiren draucate, erraiten dutela, Iauna, noiz ikussi augu gosse edo egarri, edo arrotz, edo billuci, edo eri, edo presoindeguian, eta ezaugu cerbitzatu?

45 Orduan ihardetsiren draue, erraiten duela, Eguiaz diotsuet chipien hautaric bati eguin eztraucaçuen becembatean, niri-ere eztrautaçue eguin.

46 * Eta ioanen dirade hauc tormenta eternalera: baina iustoac vicitze eternalera. *Ioan.5.29.*

CAP. XXVI.

1 *Iesusec aitzinetic erraiten nola hil behar çuen. 3. Haren contra conseillu eduqueiten. 14 Iudasec hura saltzen. 17 Christec Bazcoa iaten. 26 Cenaren institutionea. 30 Canticoa ian ondoan. 31 Apostoluen scandalizatzea. 34, 70 Pierrisen vkatzea. 37 Triste Christ. 40 Discipuluac lo. 41 Veillatzeco eta othoitz eguiteco. Spiritua eta haraguia. 48 Iudasec Christ traditzen. 57 Christ Caiphasgana eraman içan. 59 Testimonio falsuac. 63 Iesusec Christ dela aithortzen. 67 Iesus thustatzen eta buffetatzen.*

1 ETa guertha cedin acabatu cituenean Iesusec propos hauc guciac, erran baitziecén bere discipuluey.

2 * Badaquiçue ecen bi egunen buruän Bazco eguiten dela, eta guiçonaren Semea tradituren dela crucifica dadinçat. *Marc 14.1 luc 22.2*

*Ioan.11.47* 3 * Orduã bildu içan dirade Sacrificadore principalac eta Scribác eta populuco Ancianoac Sacrificadore principal Caiphas deitzen denaren ſalara.

4 Eta conſeillu eduqui ceçaten fineciaz Ieſuſen hatzamaiteco eta hiltzeco.

5 Baina erraiten çuten, Ez beſtán, tumultoric eztençát populuaren artean.

*Marc 14.3 ioan.12.3.* 6 * Eta Ieſus Bethanian Simon ſorhayoaren etchean cela,

7 Ethor cedin harengana emaztebat, boeytabat vnguentu precio handitacoric çuela, eta huts ceçan, hura iarriric egon eta, haren buru gainera.

8 Eta *hori* ikuſſiric, haren diſcipuluey gaitzi cequién cioitela, Certaco da goaſtu haur?

9 Ecen vnguentu haur *precio* handitan ſaldu ahal çatequeen, eta eman paubrey.

10 Eta *hori* eçaguturic Ieſuſec dioſte, Cergatic fatigatzen duçue emazte haur? ecen obra ombat enegana obratu du.

*Deu.15.11* 11 * Ecen bethiere paubreac vkanen dituçue çuequin: baina ni eznauçue bethi vkanen.

12 Ecen hunec vnguentu hunen ene corputz gainera huſtea ene ohorztecotzát eguin du.

13 Eguiaz erraiten drauçuet, non-ere predicaturen baita Euangelio haur mundu gucian, hunec eguin duena-ere contaturen da hunẽ memoriotan.

14 * Orduan ioan içan da hamabietaric bat Iudas Iſcariot deitzen cena, Sacrificadore principaletara.
Marc 14. 10. luc 22.4.
15 Eta dioſte, Cer eman nahi drautaçue, eta nic hura çuey liuraturen baitrauçuet? Eta hec aſſigna cietzóten hoguey eta hamar diru *peça.*
16 Eta gueroztic aicina bilha çabilan, hura tradi leçançat.
17 * Eta altchagarri gaberico oguién beſtaco lehen *egunean* ethor citecen diſcipuluac Ieſuſgana, ciotſatela, Non nahi duc appain diaçágun iatera Bazcoa?
Marc 14. 12. luc 22.7.
18 Eta harc erran ciecen, Çoazte hirira edoceingana, eta erroçue, Magiſtruac cioc, Ene demborá hurbil duc, hi baithan eguinen diat Bazcoa neure diſcipuluequin,
19 Eta diſcipuluéc eguin ceçaten Ieſuſec ordenatu cerauen beçala, eta appain ceçaten Bazcoà.
20 Bada arraſtu cenean, iar cedin mahainean hamabiequin.
21 * Eta hec alha ciradela, erran ceçan, Eguiaz erraiten drauçuet, ecen çuetaric batec tradituren nauela.
Marc 14. 18. luc 22.14 ioan. 13.21.
22 Orduan triſte citecen haguitz, eta has cequión hetaric batbedera erraiten, Ala ni naiz, Iauna?
23 Baina harc ihardeſten çuela erran ceçan, Norc eçarten baitu enequin eſcua trempatzeco platean, harc tradituren nau.
24 Segur, guiçonaren Semea badoa harçaz

ſcribatua den beçala: baina malediction guiçon haren gainean ceinez guiçonaren Semea traditzen baita: on çuqueen guiçon harc baldin ſorthu içan ezpaliz.

25 Eta ihardeſten çuela Iudaſec, ceinec hura traditzen baitzuen, erran ceçan, Magiſtruá, ni naiz? Diotſa, Hic erran duc.

*1. Cor. 11. 24.*

26 * Eta hec alha ciradela har ceçan Ieſuſec ogui-a, eta gratiác rendaturic, hauts ceçan, eta eman ciecén bere diſcipuluey, eta erran, Har eçaçue, ian eçaçue, haur da ene gorputza.

27 Eta harturic copá, eta gratiac rendaturic, eman ciecén, erraiten çuela, Edan eçaçue hunetaric guciòc.

28 Ecen haur da ene odol Teſtamentu berricoa anhitzengatic iſſurten dena bekatuén barkamendutan.

29 Eta badiotſuet, ecen eztudala edanen hemendic harát aihen fructu hunetaric, çuequin berriric neure Aitaren reſumán hura edanen du dan egunerano.

30 Eta canticoa erranic ioan citecen Oliuatzetaco mendirát.

*Marc 14. 27. ioan. 16. 32 eta 18. 8. Zach. 13. 7*

31 * Orduan dioſte Ieſuſec, Çuec guciòc gau hunetan ſcandalizaturen çarete nitan: ecen ſcribatua da, * Ioren dut artzaina, eta barreyaturen dirade arthaldeco ardiac.

*Marc 14. 28. eta 16. 7.*

32 Baina reſuſcita nadin ondoan, * çuen aitzinean ioanen naiz Galileara.

33 Eta ihardeſten duela Pierriſec diotſa, Guciac hitan ſcandaliza baditez-ere, ni iagoitic ez-

niaitec ſcandaliza.

34 Diotſa Ieſuſec,* Eguiaz erraiten drauat, ecen gau hunetan oillarrac io deçan baino lehen hiruretan vkaturen nauäla.

*Ioan 13.38*

35 Diotſa Pierriſec, Are baldin hirequin hiltzera behar badaquit-ere, ez aut vkaturen. Halaber diſcipulu guciec-ere erran ceçaten.

36 *Orduan ethor cedin Ieſus hequin Gethſemane deitzen den leku batetara: eta dioſte diſcipuluey, Iar çaitezte hemen, harache ioanic othoitz daididano.

*Marc 14. 32.*

37 Eta harturic Pierris eta Zebedeoren bi ſemeac, has cedin triſtetzē eta guciz keichatzen.

38 Orduan dioſte Ieſuſec, Alde gucietaric triſte da ene arima heriorano: çaudete hemen, eta veilla eçaçue enequin.

39 Eta aitzinachiago ioanic, ahozpez iar cedin, othoitz eguiten çuela, eta cioela, Ene Aitá, baldin poſſible bada, iragan bedi eneganic copa haur: guciagatic-ere ez nola nic nahi baitut, baina nola hic.

40 Guero ethorten da diſcipuluetara, eta erideiten ditu lo daunçala: eta diotſa Pierriſi, Horrela orembat ecin veillatu duçue enequin?

41 Veilla eçaçue eta othoitz eguiçue, ſar etzaitezten tentationetan: ecen ſpiritua prompto da, baina haraguia flacu.

42 Berriz bigarren aldian ioan cedin, eta othoitz eguin ceçan, erraiten çuela, Ene Aitá, baldin poſſible ezpada copa haur iragan dadin eneganic, hura edaten dudala baicen: eguin bedi

hire vorondatea.

43 Guero itzuliric erideiten ditu berriz lo daunçala: ecen hayen beguiac ſorthatuac ciraden.

44 Eta vtziric hec, berriz ioan cedin, eta othoitz eguin ceçan heren aldian, hitz berac erraiten cituela.

45 Orduan ethorten da bere diſcipuluetara, eta dioſte, Lo eguiçue gaurguero, eta repoſa çaitezte: huná, hurbildu da orena, eta guiçonaren Semea liuratzen da gaichtoén eſcuetara.

46 Iaiqui çaitezte, goacen: huná, hurbildu da ni traditzen nauena.

*Marc 14. 43. luc 22. 47. ioan 18.3.*

47 *Eta hura oraino minço cela, huná, Iudas hamabietaric bat, ethor cedin, eta harequin gẽdetze handia ezpatequin eta vhequin, Sacrificadore principalén eta populuco Ancianoén partez.

48 Eta hura traditzen çuenac, eman cerauen ſeignale, cioela, Nori-ere pot eguinen baitraucat, hura da: çatchetzate hari.

49 Eta bertan hurbilduric Ieſuſgana, erran ceçan, Magiſtruá, Vngui hel daquiala. Eta pot eguin cieçón.

50 Orduan Ieſuſec erran cieçón Adiſquideá, certan aiz hemen? Orduan hurbilduric eçar citzaten eſcuac Ieſuſen gainean, eta lot cequizquión.

51 Eta huná, Ieſuſequin ciradenetaric batec, auançaturic eſcua, idoqui ceçan bere ezpatá, eta ioric Sacrificadore principalaren cerbitzaria, e-

dequi cieçón beharria.

52 Orduan diotsa Iesusec, Itzul eçac eure ezpatá bere lekura :*ecen ezpata harturen duten guciac, ezpataz hilen dituc. *Gene. 9. 6. apoc. 13. 10*

53 Vste duc ecin othoitz daidiodala orain neure Aitari, eta baitinguzquet bertan hamabi legione baino guehiago Aingueru?

54 Nolatan beraz cōpli litezque * Scripturác, *diotenean*, ecen hunela behar dela eguin? *Esa. 53. 10*

55 Ordu hartan berean erran ciecén Iesusec gendetzey, Gaichtaguin baten ondoan beçala ilki içan çarete ezpatequin eta vhequin, ene hatzamaitera: egun oroz çuen artean iarten nincén, iracasten ari nincela templean, eta eznauçue hatzaman.

56 *Baina haur gucia eguin içan da, compli litecençat Prophetén Scripturác. Orduan discipulu guciéc, hura abandōnaturic, ihes eguin ceçaten. *Lamen. 4. 20.*

57 *Baina Iesus, hatzaman çutenéc, eraman ceçaten Caiphas Sacrificadore subiranoagana, non Scribác eta Ancianoac bilduac baitziradē. *Marc 14. 53. luc 22. 54. ioan 18. 24*

58 Eta Pierris iarreiquiten çayón vrrundanic Sacrificadore subiranoaren salarano, eta barnera sarthuric, iar cedin cerbitzariequin, fina ikus leçançát.

59 * Eta Sacrificadore principalac eta Ancianoac eta conseillu gucia testimoniage falsu bilha çabiltzan Iesusen contra, hil eraci leçatēcát: *Marc 14. 55.*

60 Eta etzeçaten eriden: eta anhitz testimonio falsu ethorri bacen-ere etzeçaten eridē *moldez-*

*coric.* Baina finean ethorriric bi testimonio falsuc erran ceçaten,

*Ioan 2.19.* 61 Hunec erran du, *Deseguin ahal dirot Iaincoarẽ templea, eta hirur egunez hura reedifica.

62 Orduan iaiquiric Sacrificadore subiranoac errã cieçón, Eztuc deus ihardesten? cer *da* hauc hire contra testificatzen dutena?

63 Eta Iesus ichilic cegoen. Orduan ihardesten duela Sacrificadore subiranoac diotsa, Adiuratzen aut Iainco viciarẽ partez, erran dieçaguán, eya hi aicenez Christ Iaincoaren Semea.

*Lebẽ 16.27 rom. 14.10 1.thes.4.16* 64 Diotsa Iesusec, Hic erran duc: baina are diotsuet, Hemendic harat ikussiren duçue * guiçonaren Semea iarriric dagoela *Iaincoaren* bothearen escuinean, eta ceruco hodeyetan ethorten dela.

65 Orduan Sacrificadore subiranoac erdira citzan bere abillamenduac, erraiten çuela, Blasphematu du, cer guehiago testimonio behar dugu? huná, orain ençun vkan duçue hunẽ blasphemioa.

66 Cer irudi çaiçue? Eta hec ihardesten çutela, erran ceçaten. Hil mereci du.

*Esa.50.6.* 67 *Orduan thu eguin cieçoten beguithartera, eta buffeta ceçaten, eta bercéc cihorréz vkaldi eman cieçoten,

68 Cioitela, Christ, prophetiza ieçaguc, nor den io auena.

*Marc 14. 66. luc 22.55. ioan 18.16.* 69 *Eta Pierris iarriric cegoén lekorean salán: eta ethor cequión nescatobat, cioela, Hi-ere Iesus Galileanoarequin incén.

70 Baina harc vka ceçá gucién aitzinean, cioela, Etzeaquinat cer dionán.

71 Eta hura corralerat ilkiten cela ikus ceçan berce *nescato* batec: eta erran ciecén han ciradeney, Haur-ere Iesus Nazarenorequin cen.

72 Eta berriz vka ceçan iuramendurequin, *cioela*, Ezteçagut guiçona.

73 Eta appur-baten buruän ethor citecen present içan ciradenac, eta erran cieçoten Pierrisi, Eguiazqui hi-ere hetaric aiz: ecen eure minçatzeac-ere declaratzen au.

74 Orduan has cedin maradicatzen eta arnegatzen, *cioela*, Ezteçagut guiçona. Eta bertan oillarrac io ceçan.

75 Orduan orhoit cedin Pierris Iesusec erran ceraucan hitzaz, ceinec erran baitzeraucan, Oillarrac io deçan baino lehen, hiruretan vkaturen nauc. Eta camporat ilkiric nigar eguin ceçan mingui.

## CAP. XXVII.

*2 Christ Pilatgana eraman içan. 5 Iudasec bere buruä vrkatu. 16 21 Barabbas. 26 Christ açotatu eta crucificatzeco liuratu. 29 Elhorriz coroatu. 30 Thustatu eta escarniatu. 34, 48 Vinagrez eta behaçunez eradä. 38 Bi gaichtaguinequin crucificatu. 45 Herri gucia ilhundu. 46 Christec crutzean othoitz eguin. 50 Spiritua rendatu. 51 Haren herioco miraculuac. 54 Centenera. 60 Iosephec Christ ohortze. 64 Sepulchreco goardác.*

Marc 15.1 luc 22.66. ioan 18.28

1 *GVero goiça ethorri cenean, conſeillu eduqui ceçaten Sacrificadore principal eta populuco Anciano guciéc Ieſuſen contra, hura heriotara eman leçatençat.

2 Eta eſtecaturic eraman ceçaten, eta liura cieçoten Pontio Pilate gobernadoreari.

3 Orduan Iudaſec, hura traditu çuenac, çacuſſanean hura condemnatu cela vrriquituric, itzul cietzén hoguey eta hamar diruäc Sacrificadore principaley eta Ancianoey.

4 Cioela, Bekatu eguin dut, odol innocentaren traditzeaz. Baina hec erran ceçaten, Cer dohacu guri? hic dacuſſála.

5 Eta diruäc iraitziric templean, retira cedin, eta ioanic, *vrka ceçan bere buruä.

Act. 1.18.

6 Orduä Sacrificadore principalec diruäc harturic erran ceçaten, Ezta ſori hauc theſaurean eçar ditecen, ecen odol precioa da.

7 Eta conſeillu harturic, eros ceçaten heçaz topinaguile baten lãdá eſtrãgeren ohortz leku.

Act. 1. 19.

8 Halacotz deithu içan da landa hura, *odollanda, egungo egunerano.

9 Orduan compli cedin Hieremias prophetáz erran içan cena, cioela, *Eta hartu vkan dituzté hoguey eta hamar diruäc, eſtimatu içan denaren precioa, cein eſtimatu içan baita Iſraeleco haourréz:

Zach. 11. 12.

10 Eta eman dituzte hec tupinaguile baten landaren eroſteco, Iaunac niri ordenatu cerau-

tan beçala.

11 *Eta Iesus eraman cedin Gobernadorearen aitzinera, eta interroga ceçan Gobernadoreac, cioela, Hi aiz Iuduén Reguea? Iesusec erran cieçón, Hic dioc.

*Marc 15.2 luc 23.3. ioan 18.33*

12 Eta accusatu içanic Sacrificadore principaléz eta Ancianoéz, deus etzeçan ihardets.

13 Orduan diotsa Pilatec, Eztançuc cembat gauça hire contra testificatzen duten?

14 Eta etzieçón ihardets hitz batetara-ere: *hala* non mirestén baitzuen Gobernadoreac haguitz.

15 Bada bestán costumatu çuen Gobernadoreac populuari beréc nahi çutén presoner baten largatzera.

16 Eta orduan baçutén presoner notablebat, Barabbas deitzen cenic.

17 Bildu ciradenean bada hec, erran ciecén Pilatec, Cein nahi duçue larga dieçaçuedã? Barabbas, ala Iesus, deitzen dena Christ?

18 Ecen baceaquian inuidiaz hura liuratu çutela.

19 Eta hura alki iudicialean iarriric cegoela, igor cieçón bere emazteac, cioela, Eztuála hic deus iusto horrequin, ecen anhitz iragan diat egun ametsetaric horrengatic.

20 *Orduan Sacrificadore principaléc eta Ancianoéc burutan eman cieçoten populuari Barabbasen esca litecen, eta Iesus hil eraci leçaten.

*Marc 15. 11. luc 23. 18. ioan 18.40 act.3.14.*

21 Eta ihardesten çuela Gobernadoreac erran ciecén, Biotaric cein nahi duçue larga dieçaçue-

dan? Eta hec erran cieçoten, Barabbas.

22 Erran ciecén Pilatec, Cer eguinen dut beraz Iesusez Christ deitzen denaz? Diotsate guciéc, Crucifica bedi.

23 Eta Gobernadoreac dioste, Baina cer gaizqui eguin du? Orduan hec ohiu guehiago eguiten çutén, erraiten çutela, Crucifica bedi.

24 Eta ikussiric Pilatec ecen etzuela deus probetchatzen, baina tumultoa handitzenago cela, vr harturic ikuz citzan escuac populuaré aitzinean, cioela, Innocent naiz ni iusto hunen odoletic: çuec ikussaçue.

25 Eta ihardesten çuela populu guciac erran ceçan, Horren odola dela gure gainean eta gure haourren gainean.

26 Orduan larga ciecén Barabbas: eta Iesus açotaturic liura ciecén crucifica ledinçát.

*Marc 15. 16. ioan 19.1.*

27 *Orduan gobernadorearen gendarmeséc eramanic Iesus pretoriora, bil ceçaten haren aitzinera banda gucia.

28 Eta billuci çutenean eman cieçoten soinera escarlatazco mantobat.

29 Eta elhorrizco coroabat plegaturic eçar ceçaten haren buru gainean, eta canaberabat haren escuinean: eta haren aitzinean belhauricatuz truffatzen ciraden harçaz erraité çutela, Vngui hel daquiala, Iuduen Reguea.

30 Eta thu eguinic haren contra, har ceçaten canabera hura, eta haren buruäri ceraunsaten.

31 Guero harçaz truffatu ciradenean, eraunz cieçoten mantoa, eta vezti ceçaten bere abillamenduez

menduez:eta eraman ceçaten crucificatzera.
32 *Eta ilki ciradenean eriden ceçaten guiçon Cyreniano Simon deitzen cembat: haur bortcha ceçaten haren crutzearen eramaitera.
Marc 15. 21. luc 23.26.
33 *Eta ethorri ciradenean Golgotha deitzen den lekura (cein erran nahi baita hambat nola bur-heçur lekua)
Marc 15. 22. luc 23.33. ioan 19.18.
34 Eman cieçoten vinagre edatera behaçunarequin nahaſtecaturic: eta daſtatu çuenean etzuen edan nahi vkan.
35 *Eta crucificatu çutenean parti citzaten haren abillamenduac, çorthe egotziric: compli ledinçát Prophetáz erran cena, *Partitu vkan dituzte ene abillamenduac, eta ene arroparen gainean çorthe egotzi vkan duté.
Marc 15. 24.
Pſal. 22. 19
36 Eta iarriric ceudela beguiratzen çutén hurá han.
37 Eta eçar ceçàten haren buru garayan haren cauſá ſcribaturic, HAVR DA IESVS IVDVEN REGVEA.
38 Orduan crucificatu içan dirade harequin bi gaichtaguin bata eſcuinetic eta bercea ezquerretic.
39 Eta iragaiten ciradenéc iniuriatzen çuten hura, bere buruäc higuitzen cituztela,
40 Eta cioitela, *Hic templea deſeguiten duanorrec, eta hirur egunez edificatzen, empara eçac eure buruä: baldin Iaincoarē Semea bahaiz, iauts adi crutzetic.
Ioan 2. 19.
41 Halaber Sacrificadore principaléc-ere truffatzen ciradela Scribequin eta Ancianoequin,

errraiten çutén,

42 Berceac emparatu ditu, bere buruä ecin empara diro:baldin Iſraeleco Regue bada, iauts bedi orain crutzetic, eta ſinhetſiren dugu hori.

Pſal.22.9. ſapiē.2.18. 43 *Fida da Iaincoa baithan, empara beça orain,baldin haren gogaraco bada:ecen erran du, Iaincoaren Semea naiz.

44 Hura bera, harequin crucificatu ciraden gaichtaguinec-ere reprotchatzen ceraucaten.

45 Baina ſey orenetaric bedratzi orenetarano lur guciaren gainean ilhumbe eguin cedin.

46 Eta bedratzi orenén inguruän oihuz iar cedin Ieſus ocengui,cioela,*Eli, Eli, lama ſabachthani?errã nahi baita,Ene Iaincoa,Ene Iaincoa, ceren abandonnatu nauc?

Pſal.22.1.

47 Eta han preſent ciradenetaric batzuc *hori* ençunic,cioiten,Elias deitzen du hunec.

Pſal.69.21 48 Eta bertan laſter eguinic hetaric batec,*eta ſpongiabat harturic vinagrez betheric,eta eçarriric canabera baten inguruän, edatera eman cieçón.

49 Eta bercéc erraiten çuten, Vtzac, dacuſſagun, eya ethorriren denez Elias horren emparatzera.

50 Eta orduan Ieſuſec berriz ocengui oihu eguinic,ſpiritua renda ceçan.

2.Chron.3.14. 51 *Eta huná,templeco velá erdira cedin bi çathitara, garaitic behererano, eta lurra ikara cedin,eta harriac,erdira citecen.

52 Eta monumentac irequi citecen, eta anhitz Saindu lo ceunçanén gorputzac iaiqui citecen.

53 Eta monumentetaric ilkiric haren resurrection ondoan, sar citecen ciuitate saindura, eta aguer cequizquien anhitzi.

54 Eta Centenera, eta harequin Iesusen beguirale ceudenac, *lur* ikaratzea eta eguin içan ciraden gauçác ikussiric, ici citecen haguitz, erraiten çutela, Eguiazqui Iaincoaren Semea cen haur.

55 Han ciraden halaber anhitz emazte vrrundanic beha ceudela, cein iarreiqui içan baitzaizcan Iesusi Galileatic, hura cerbitzatzen çutela.

56 Hetaric cen, Maria Magdalena, eta Maria Iacquesen eta Iosesen ama, eta Zebedeoren semen amá.

57 *Eta arrastu cenean, ethor cedin guiçon abratsbat Arimathiatic, Ioseph deitzen cenic, hura-ere Iesusen discipulu içan cen.

*Marc 15. 42. luc 23.50. ioan 19.38*

58 Haur ethor cedin Pilatgana, eta esca cequión Iesusen gorputzaren: orduan mana ceçan Pilatec renda ledin gorputza.

59 Eta gorputza harturic Iosephec mihisse churi batetan barna eçar ceçan.

60 Eta eçar ceçan bere monument berri arroca batetan ebaquia çuenean: eta harri handibat monument borthara itzuliric, ioan cedin.

61 Eta Maria Magdalena eta Maria bercea ciraden han iarriac sepulchre aurkán.

62 Eta biharamunean, cein baita *Sabbathoaren* preparatione ondoán, bil citecen Sacrificadore principalac, eta Phariseuac Pilatgana,

63 Erraiten çutela, Iauna, orhoitu gaituc nola

abuſari harc vici cela erran ceçan, Ondoco heren eguneaan reſuſcitaturen naiz.

64 Mana eçac bada beguira dadin ſepulchrea heren egunerano, harẽ diſcipuluéc gauäz ethorriric, hura ebats ezteçaten, eta populuari derroten, Reſuſcitatu da hiletaric: eta *halaz* baitate azquen errorea lehena baino gaichtoago.

65 Eta erran ciecén Pilatec, Badituçue goardac: çoazte, ſegura çaitezte daquiçuen beçala.

66 Hec bada ioanic ſegura ceçaten ſepulchrea, harria ciguilaturic, goardequin.

## CAP. XXVIII.

1 *Emazteac ſepulchrera ethorri.* 2 *Lurra ikaratu, eta Ainguerua cerutic iautſi.* 6 *Chriſt reſuſcitatu.* 9 *Emaztey bidera ilki.* 17 *Diſcipuluey aguertu, eta heçaz adoratu.* 19 *Bere Apoſtoluac predicatzen eta batheyatzen artzera igorri.*

Marc 16.6 ioan 20.11.

1 * ETa Sabbath azquencean aſteco lehen arguitu behar cen *egunean*, Maria Magdalena eta Maria bercea ethor citecen ſepulchrearen ikuſtera.

2 Eta huná, lur ikaratze handibat eguin cedin: ecen Iaunaren Ainguerua iauts cedin cerutic, eta ethorriric aldara ceçan harria borthatic, eta iarriric cegoen haren gainean.

3 Eta cen haren ikartzea chiſtmiſta beçala, eta haren abillamendua churi elhurra beçalá.

4 Eta haren beldurrez, ici citecen goardác, eta hilac beçalaca citecen.

5 Baina ihardeſten çuela Ainguerüäc errã ciecén emaztey, Çuec eztuçuela beldurric: ecen badaquit Ieſus crucificatu içan denaren bilha çabiltzatela:

6 Ezta hemen: ecen reſuſcitatu içan da, erran çuẽ beçala: çatozte ikuſſaçue Iauna eçarri içan cen lekua.

7 Eta bertan ioanic erreçue haren diſcipuluey, ecen reſuſcitatu dela: eta huná, çuen aitzinean doa Galileara: han hura ikuſſiren duçue. Huná, erran drauçuet.

8 Eta bertan partituric monumentetic iciapen eta bozcario handirequin, laſter eguin ceçaten haren diſcipuluey declaratzera.

9 Baina hec harẽ diſcipuluey declaratzera cioacela, huná, Ieſus aitzinera ethor cequien, cioela, Vngui hel daquiçuela. Eta hec hurbilduric lot cequiztén haren oiney, eta adora ceçaten hura.

10 Orduan dioſte Ieſuſec, Eztuçuela beldurric: çoazte, declara ieceçue ene anayey, doacen Galileara: eta han ikuſſiren nauté.

11 Hec partitu eta, huná, goardetaric batzu ethor citecen hirira, eta declara cietzén Sacrificadore principaley eguin içan ciraden gauça guciac.

12 Orduan bilduric Ancianoequin, eta cõſeillu harturic, diru ſomma ona eman ciecén gendarmeſey:

13 Cioitela, Erraçue, Haren diſcipuluéc gauaz ethorriric, hura ebatſi vkan duté gu lo gaũçala.

14 Eta baldin hori gobernadoreac ençun ba-

deça, guc ſinhets eraciren drauçagu, eta eguitecotaric idoquiren çaituztegu.

15 Eta hec diruä harturic eguin ceçaten iracatſi içan ciraden beçala: eta publicatu içan da propos haur Iuduén artean egungo egunerano.

16 Baina hameca diſcipuluaç ioan citecen Galilearát, mendira, non ordenatu baitzarauen Ieſuſec.

17 Eta hura ikuſſiric adora ceçaten: eta batzuc duda ceçaten.

18 Eta hurbilduric Ieſus minça cequién, cioela, *Eman içan çait niri bothere gucia ceruän eta lurrean.

*Ioan 17. 2. hebr. 2. 8.*

19 *Çoazte bada eta iracats itzaçue gende guciac: batheyatzen dituçuela Aitaren eta Semearen eta Spiritu ſainduaren icenean:

*Marc 16. 15.*

20 Iracaſten dituçuela *nic* manatu drauçu edan guciaren beguiratzen: eta huná, ni çuequin naiz bethiere munduaren finerano. Amen.

# IESVS CHRISTEN EVANGELIO SAINDVA S. MARC-EN ARAVRA.

## ÇAP. I.

*4 Baptiſmoa. 5 Confeßionea. 6 Ioanneſen veztidurá eta ianharia. 9 Chriſtec, batheyatu, 13 eta tentatu içan den ondoan, 14 Predicatzen: 17, 19 Apoſtoluac deitzen: 21, 39 Synagoguetan iracaſten. 24 Deabruac hura eçagutzen. 25 Guero Chriſtec demoniatua, eta 30 Pierriſen ama-guinharreba ſendatzen. 35 Deſertuan othoitz eguiten, 40 Sorhayoa ſendatzen.*

1 IESVS CHRIST Iaincoaren Semearen Euangelio hatſea:
2 Scribatua den beçala Prophetetan, *Huná, nic igorten diat neure mãdataria hire beguitharte aitzinean, ceinec appaindurẽ baitu hire bidea hire aitzinean. (*Mala.3.1.*)
3 *Deſertuan oihuz dagoenaren voza *da,* Appain eçaçue Iaunaren bidea, plana itzaçue haren bideſcác. (*Eſa.40.3. ioan 1.23. luc 3.4.*)
4 *Batheyatzen ari cen Ioannes deſertuan, eta predicatzen çuen emendamẽdutaco baptiſmoa (*Matth.3.1*)

bekatuén barkamendutan.

*Matth.3.5* 5 *Eta ioaiten cen harengana Iudeaco herri gucia eta Ierusalemecoac:eta batheyatzen ciraden guciac harenganic Iordaneco fluuioan, bere bekatuac confessatzen cituztela.

6 Eta cen Ioannes veztitua camelu biloz, eta larruzco guerrico batez bere guerruncean inguru,*eta othi eta bassez ti iaten çuen.

*Leuit.11.22.*

*Matt.3.11 luc 3.16. ioan 1.27.* 7 *Eta predicatzen çuen, cioela, Ethorten da ni baino borthitzago dena ene ondoan, ceinen çapatetaco hedearen beheitituric ezpainaiz lachatzeco digne.

*Act.1.5, eta 2.4, eta 11.16, eta 19.4.* 8 *Eguia da, nic batheyatzen çaituztet vrez, baina harc batheyaturen çaituzte Spiritu sainduaz.

*Mat.3.13. luc 3.21. ioan 1.32.* 9 *Eta guertha cedin egun hetan, Iesus ethor baitzedin Nazareth Galileacotic, eta batheya baitzedin Ioannesganic Iordanean.

10 Eta bertan ilkiten cela vretic, ikus citzan ceruäc erdiratzen, eta Spiritu saindua vsso colombabat beçalá haren gainera iausten.

11 Eta voz-bat eguin cedin cerüetaric, cioela, Hi aiz ene Seme maitea ceinetan hartzen baitut neure atseguin ona.

*Matt.4.1. luc 4.1.* 12 *Eta bertan Spirituac irion ceçan hura desertura.

13 Eta egon cedin han desertuan berroguey egun, tentatzen cela Satanez: eta cen bassa bestiequin, eta Ainguerüec cerbitzatzen çuten.

*Matt.4.12 Luc 4.14. ioan 4.43.* 14 *Eta Ioannes hatzaman içan cenean, *ethor cedin Iesus Galileara, predicatzen çuela Iain-

coaren resumaren Euangelioa:

15 Eta cioela, Complitu da demborá, eta hurbil da Iaincoaren resumá: emenda çaitezte, eta sinhets eçaçue Euangelioa.

16 * Eta Galileaco itsas bazterrean çabilala ikus citzan Simon eta Andriu haren anayea, sareac itsassora egoizten cituztela (ecen pescadore ciraden)

Mat.4.18. luc 5.2.

27 Eta erran ciecen Iesusec, Çatozte ene ondoan eta eguinen çaituztet guiça pescadore.

18 Eta bertan vtziric bere sareac iarreiqui içaçaizcan.

19 Eta handic aitzinachiago ioanic, ikus citzā Iacques Zebedeoren *semea* eta Ioannes haren anayea, hec-ere vncian bere sareac adobatzen cituztela.

20 Eta bertan dei citzan hec: eta bere aita Zebedeo vnciā vtziric languilequin, iarreiqui içan çaizcan.

21 * Guero sartzen dirade Capernaum-en, eta bertan Sabbath *egunean* sarthuric synagogán, iracasten ari cen.

Mat. 4.13. Luc 4.31.

22 * Eta spātaturic ceuden haren doctrináz, ecen iracasten cituen authoritate çuenac beçala, eta ez Scribéc beçala.

Mat.7.28. luc 4.32.

23 * Eta cen hayén synagogán guiçombat spiritu satsua çuenic, eta oihuz iar cedin,

Luc.4.33.

24 Cioela, Ah, Cer da hire eta gure artean Iesus Nazarenoa? gure deseguitera ethorri aiz? ba ceaquiat nor aicen, *hi aiz* Iaincoaren saindua.

25 Eta mehatcha ceçan hura Iesusec, cioela, I-

chil adi, eta ilki adi horrenganic.

26 Eta ſpiritu ſatſua hura çathituric, eta ocengui oihuz iarriric, ilki cedin harenganic.

27 Eta ſpanta citecen guciac, hala non bere artean galdez baitzeuden, cioitela, Cer da haur? cer doctrina berri da haur? authoritatez ſpiritu ſatſuac-ere manatzen baititu eta obeditzen baitute?

28 Eta io ceçan haren famác bertan Galilea inguruco comarca gucia.

Marc 8.14 luc 4.38.

29 * Eta bertan ſynagogatic ilkiric, ethor citecen Simonen eta Andriuen etchera Iacqueſequin eta Ioanneſequin.

30 Eta Simonen ama-guinharreba cetzan hel gaitzarequin: eta bertan minçatu içan çaizcan harçaz.

31 Orduan hurbilduric goiti ceçan hura eſcutic harturic, eta bertan vtzi ceçan helgaitzac: eta *harc* cerbitza citzan.

32 Eta arratſean, iguzqui ſartzean, ekarten cerautzatē gueizqui ceuden guciac eta demoniatuac.

33 Eta hiri gucia borthara bildua cen.

34 Eta ſenda citzā erharçun diuerſez eri ciraden guciac: eta anhitz deabru campora egotz ceçan, eta etzituen deabruac minçatzera vtziten nola hura eçagutu vkan lutén.

35 Guero goicean oraino ilhun handia cela iaiquiric ilki cedin, eta ioan cedin leku deſertu batetara, eta han othoitz eguiten çuen.

36 Eta iarreiqui içan çaizcan Simon eta hare-

quin ciradenac.

37 Eta eriden çutenean, erran cieçoten, Guciac hire bilha diabiltzac.

38 Orduan dioste* Goacen hurbilengo burguëtara: han-ere predica deçadançat: ecen hartacotzat ilki içan naiz.

Luc 4.43.

39 Eta predicatzen çuen hayén synagoguetan, Galilea gucian: eta deabruac campora egoizten cituen.

40 * Eta ethor cedin harengana sorhayobat, othoitz eguiten ceraucala, eta hari belhauricaturic ciotsala, Baldin nahi baduc chahu ahal neçaquec.

Matt. 8.2 luc 5.12.

41 Orduan Iesusec compassione harturic *eta* escua hedaturic, hunqui ceçan hura, eta erran cieçón, Nahi diat, aicén chahu,

42 Eta *hori* erran çuenean, bertan ioan cedin harenganic sorhayotassuna, eta chahu cedin.

43 Eta hura mehatchaturic bertan igor ceçan camporát:

44 Eta erran cieçón, Beguirauc nehori deus ezterroan: baina ohá, eta eracuts aquio Sacrificadoreari, eta presenta itzac eure garbitzeagatic * Moysesec manatu dituen gauçác hæy testimoniagetan.

Leui. 14.3

45 Baina hura ilkiric has cedin anhitz gauçaren publicatzen, eta beharquiaren manifestatzen, hala non guehiagoric aguerriz Iesus ecin sar baitzaiten hirira, baina lekorean leku desertuetan cen, eta ethorten ciraden harengana alde gucietaric.

CAP. II.

*3 Christec paralyticoa sendatzen. 5 Bekatuac barkatzen. 14 Mattheu, eta 17 Bekatoreac deitzen. 19 Ezconduaz. 20 Barur eta afflictione ethorri beharréz. 21 Abillamendu çarreco pedaçu gogorraz. 22 Çahagui çarretaco mahatsarno berriaz. 23 Discipuluac Sabbathoan buruca idoquiten ari. 25 Dauid-ez 26 Propositioneco oguiéz. 27 Sabbathoaz.*

*Mat.9.1. luc 5.18.*

1 * ETa berriz sar cedin Capernaumen *cembeit* egunen buruan, eta ençun içan da ecen etchean cela.

2 Eta bertan anhitz bildu içan dirade *hambat* non bortha aldiriéc-ere ecin eduqui baitzitzaqueizten: eta declaratzen cerauen hitza.

3 Orduan ethor citecen *batzu* herengana, ekarten çutela laurez eramaiten cen paralyticobat.

4 Eta ceren ecin hurbil baitzaquidizquion gẽdetzearen causaz, aguer ceçaten Iesus çen etche gaina, eta hura çulhaturic, erauts ceçaten paralyticoa cetzan ohea.

5 Orduan Iesusec hayén fedea ikussiric, erran cieçón paralyticoari, Semé, barkatu çaizquic eure bekatuac.

6 Eta Scribetaric batzu ciraden han iarriac, eta iharduquiten çuten bere bihotzetan, *hunela*,

7 Cergatic haur hunela blasphemio erraiten ari da? * Norc bekatuac barka ahal ditzaque Iaincoac berac baicen?

*Iob 14.4 esa.43.25. psal.51.1.*

8 Eta bertan eçaguturic Iesusec bere spirituaz,

ecen hala ciharducatela berac baithan, erran ciecen, Cergatic horrelaco gaucez diharducaçue çuen bihotzetan.

9 Cein da erratchago, erraitea paralyticoari, Barkatu çaizquic bekatuac, ala erraitea, Iaiqui adi, eta har eçac eure ohea, eta ebil adi?

10 Daquiçuençat bada ecen guiçonaren Semeac baduela bothere bekatuén barkatzeco lurrean (diotsa paralyticoari)

11 Hiri diossat, Iaiqui adi, eta har eçac eure ohea, eta habil eure etcherát.

12 Eta bertan iaiqui cedin, eta ohea harturic, ilki cedin gucién presentian: hala non guciac spantatuac baitzeuden, eta glorificatzē baitzuten Iaincoa, erraiten çutela, Egundano hunelaco gauçaric eztugu ikussi.

13 * Eta ilki cedin berriz itsas alderat: eta populu gucia ethorten cen harēgana, eta iracasten cituen hec.

*Mat.9.9. luc 5.27.*

14 Eta vrruti iragaiten cela, ikus ceçan, Leui Alpheoren *semea* peage lekuan iarriric, eta errā cieçón, Arreit niri. Eta iaiquiric iarreiqui cequión.

15 Eta guertha cedin, Iesus haren etchean mahainean iarriric cegoela, anhitz publicano eta gende vicitze gaichtotaco iar baitzedin Iesusequin eta haren discipuluequin, ecén anhitz ciraden eta iarreiqui içan çaizcan..

16 Eta Scribéc eta Phariseuéc ikussiric publicanoequin eta gende vicitze gaichtotacoequin iaten çuela, erran ciecén haren discipuluey, Cer-

gatic publicanoequin eta vicitze gaichtotacoequin iaten du eta edaten?

17 Eta *haur* ençunic Iesusec dioste, Osso diradenéc eztute medicurẽ beharric: baina eri diradenéc: **ecen* ez naiz ethorri iustoén deitzera: baina bekatoren, emendamendutara.

1 Tim.1.15

Mat.9.14. luc 5.33.

18 * Eta Ioannesen eta Phariseuén discipuluéc barur eguiten çutén: eta *hec* ethorten dirade eta diotsate, Cergatic Ioannesen eta Phariseuen discipuluéc barur eguiten dute, eta hire discipuluéc ezpáitute baruric eguiten?

19 Eta erraiten draue Iesusec: Ezteyetaco gendéc baruric ahal daidite ezcondua hequin deno? ezcondua berequin duteno baruric ecin daidite.

20 Baina ethorriren dirade egunac edequiren baitzaye ezcondua, eta orduan barur eguinen duté egun hetan.

21 Eta nehorc oihal pedaçu latz-bat eztu iostẽ abillamendu çar batetan, ezpere haren compligarri berri harc edequiten drauca çarrari, eta gaizcoatzenago da ethendurá.

22 Halaber nehorc eztu eçarten mahatsarno berria çahagui çarretan: ezpere mahatsarno berriac lehertzen ditu çahaguiac eta mahatsarnoa issurten da, eta çahaguiac galtzen dirade baina mahatsarno berria çahagui berrietan eçarri behar da.

Mat.12.1. Luc 6.1.

23 * Eta guertha cedin hura iragaiten baitzen Sabbath *egun-batez* ereincetan gaindi, eta has citecen haren discipuluac bidean cioacela buru-

caidoquiten.

24 Eta Phariseuéc erran cieçoten, Horrá, cergatic eguitẽ duté Sabbathoã eguin sori eztena?

25 Eta harc erran ciecén, Eztuçue egundano iracurri vkan,* cer eguin çuen Dauid-ec necessitate çuenean, eta gosseru cenean bera eta harequin ciradenac?

1 *Sam.21.6.*

26 Nola sarthu içan cen Iaunaren etchean Abiathar Sacrificadore principalaren demborán: eta propositioneco oguiac ian vkan cituen,* Sacrificadorén baicen iateco sori etziradenac, eta *nola* harequin ciradeney-ere eman cerauen?

*Exo.29.33 leui. 8.31. eta 24.9.*

27 Guero erran ciecén: Sabbathoa guiçonagatic eguin içan da, ez guiçona Sabbathoagatic.

28 Bada guiçonaren Semea Sabbathoaren-ere iabe da.

## CAP. III.

1 *Escu eyarrha sendatzen.* 6 *Conseillu Christen contra* 10 *Eriac sendatzen,* 11 *Spiritu satsuéc Christ eçagutzen.* 14 *Christec Apostoluac predicatzeco ordenatzen.* 16 *Apostoluén icenac.* 22 *Blasphemioa.* 24 *Resuma çathitua.* 29 *Spiritu sainduaren contretaco blasphemioa.* 35 *Christen eguiazco ahaideac cein diradén.*

1 GVero * sar cedin berriz synágogán, eta cen han guiçombat escua eyhartua çuenic.

*Mat.12.9. luc 6.6.*

2 Eta gogoatzẽ çutén eya Sabbathoan sendaturen çuenez accusa leçatençat.

3 Eta diotſa guiçon eſcu eyhartua çuenari, Iaiqui adi artera.

4 Guero dioſte, Sabbathoan vngui eguitea da ſori, ala gaizqui eguitea? perſona baten empparatzea, ala hiltzea: baina hec ichilic ceuden.

5 Eta hetarát inguru behaturic aſſerrerequin, eta hayén bihotzeco obſtinationeaz contriſtaturic, diotſa guiçonari, Heda eçac eure eſcua: Eta heda ceçan, eta haren eſcua, bercea beçain ſenda cedin.

6 Orduan ilkiric Phariſeuéc, bertan Herodianoequin conſeillu eduqui ceçaten haren contra, hura hil leçatençat.

7 Baina Ieſus bere diſcipuluequin retira cedin itſas alderát: eta iarrequi cequión gendetze hãdia Galileatic eta Iudeatic.

8 Eta Ieruſalemetic, eta Idumeatic, eta Iordanaz berce aldetic: eta Tyreco eta Sydoneco inguruëtan habitatzen ciradenetaric gendetze hãdi, ençunic cein gauça handiac eguiten cituen, ethor citecen harengana.

9 Eta erran ciecén bere diſcipuluey vncichobat bethi preſt eduqui lequión, gendetzearen cauſaz, hers ezleçatençát.

10 Ecen anhitz ſendatu vkan çuen, *hala* non afflictionetan ciraden guciac oldartzen baitziraden harengana hunqui leçatençat.

11 Eta ſpiritu ſatſuéc hura ikuſten çutenean, haren aitzinera bere buruäc egoizten cituztén, eta oihu eguiten çuten, cioitela, Hi aiz Iaincoaren Semea.

12 Baina

12 Baina harc haguitz mehatchatzen cituen, manifesta ez leçatençat.

13 * Guero igan cedin mendi batetara, eta dei citzan beregana nahi cituenac:eta ethor citecen harengana.

*Berriz 6.7. marc 10.1 luc 9.1*

14 Eta ordena citzan hamabi harequin içateco, eta predicatzera igorteco:

15 Eta lutén bothere eritassunén sendatzeco,eta deabruén campora egoizteco.

16 Lehenic Symon,(ceini icen eman baitzieçon Pierris:)

17 Eta Iacques Zebedeoren *semea*,eta Ioannes Iacquesen anayea,(eta hæy icen emã ciecén Boanerges, erran nahi baita, igorciri semeac)

18 Eta Andriu eta Philippe,eta Bartholomeo, eta Mattheu,eta Thomas, eta Iacques Alpheoren *semea*,eta Thaddeo,eta Simon Cananeoa,

19 Eta Iudas Iscariot, ceinec bera traditu-ere baitzuen.

20 Eta ethor citecen etchera:eta berriz gendetze handibat bil cedin, hala non oguiaren iateco *artea*-ere ecin har baitziroiten.

21 Eta *haur* ençun çutenean haren ahaideacilki citecen hatzaman leçatençat: ecen erraiten çuten,çoratu cela.

22 Eta Ierusalemetic iautsi içan ciraden Scribéc erraiten çutén,ecẽ Beelzebub çuela,eta* deabruén princearen partez deabruac campora egoizten cituela.

*Mat.9.34. eta 12.24. luc 11.15.*

23 Eta hec beregana deithuric,erran ciecén cõparationez, Nolatàn Satanec Satan campora e-

gotz ahal deçaque.

24 Ecen baldin resumabat bere contra partitua bada, ecin dauque resuma hura.

25 Eta baldin etchebat bere cõtra partitua bada, ecin dauque etche hura.

26 *Hala* baldin Satan-ere altcha badadi eta partitua bada bere contra, ecin dauque, baina fin du.

27 Ecin nehorc borthitz baten ostillamenduac, haren etchera sarthuric, pilla ahal ditzaque, baldin lehen borthitza esteca ezpadeça: eta orduan haren etchea pillaturen du.

*Mat.12.31 luc. 12.10. 1.ioan.5.16*

28 * Eguiaz erraiten drauçuet, ecen bekatu guciac guiçonén seméy barkaturen çaiztela, eta blasphematu dituqueizten blasphemio guciac:

29 Baina norc-ere blasphematuren baitu Spiritu sainduaren contra eztu barkamenduric vkanen seculan, baina içanen da condemnatione eternalaren hoguendun.

30 Ecen erraiten çuten, Spiritu satsua du.

*Mat.12.46 luc 8.19*

31 * Ethorten dirade bada haren anayeac eta haren ama: eta lekorean ceudela igor citzaten *batzu* harengana, haren deitzera.

32 Eta iarriric cegoen haren inguruän gendetzea, eta *hec* erran cieçoten, Huná, hire amac eta hire anayéc lekorean galdeguiten aute.

33 Orduan ihardets ciecén, cioela, Nor da ene ama, edo ene anayeac?

34 Eta inguru behatu çuenean harẽ inguruän iarriric ceuden discipuluetara, dio, Huná ene ama, eta ene anayeac.

35 Ecen norc-ere eguinē baitu Iaincoarē vorō datea, hura da ene anaye eta ene arreba, eta ama

## CAP. IIII.

*3, 14. Ereilleaaren comparationea.* 18 *Elhorriac.* 19 *Abrastassunac, Guthiciác.* 21 *Candela erachequia.* 24 *Neurria.* 26 *Haci lurrerá egotzia.* 31 *Mustarda bihia.* 38 *Christec vncian lo eguiten.* 39 *Haiceá eta itsassoa cessa eraciten* 40 *Fedea.*

1 * GVero berriz has cedin iraca-sten itsas bazterrean: eta bil cedin harengana gendetze handi, hala non bera vncira sarthuric, iarriric baitzegoen itsassoan: eta populu gucia itsas costan leihorrean cen.

*Mat.13.1 luc 8.4.*

2 Eta iracasten cerauen comparationez anhitz gauça, eta erraiten cerauen bere doctrinán,

3 Ençun eçaçue, Huná, ereillebat ilki cedin ereitara.

4 Eta guertha cedin ereiteā, partebat eror baitzedin bide bazterrera, eta ethor citecen ceruco choriac, eta irets ceçaten hura.

5 Eta berce *partebat* eror cedin leku harriçuetara, non ezpaitzuen lur anhitzic: eta bertan ilki cedin, ceren ezpaitzuen lur barnetassunic.

6 Baina iguzquia goratu cenean, erre cedin: eta ceren erroric ezpaitzuen, eyhar cedin.

7 Eta berce *partebat* eror cedin elhorri artera, eta elhorriac handi citecen, eta itho ceçaten hura, eta etzeçan fructuric eman.

8 Eta bercea eror cedin lur-onera, eta eman ce çan fructu goratzen eta handitzen cenic, eta ekar ceçan *bihi* batac hoguey eta hamar, eta berceac hiruroguey, eta berceac ehun.

9 Orduan erran ciecén, Ençuteco beharriric duenac, ençun beça.

10 Eta bera cela, interroga ceçaten haren inguruän hamabiequin ciradenéc, cõparationeaz.

11 Eta erran ciecén, Çuey eman çaiçue Iaincoaren resumaco secretuaren eçagutzea: baina lekorean diradeney comparationez gauça guciac tractatzen çaizte:

*Esa.6.9. mat.13.14 luc 8.10. ioan 12.40 act.28.26. rom.11.8*

12 * Dacussatela ikus deçatençat, eta eztaquizquión ohart: eta dançutela ençun deçaten, eta adi ezteçaten: conuerti eztitecen eta bekatuac barka *eztaquizquién*.

13 Eta erran ciecen, Eztaquiçue comparatione haur? eta nolatan comparatione guciac eçagutiren dituçue?

14 Ereilleac hitza ereiten du.

15 Bada hauc dirade bide bazterrera *hacia rece bitzen* dutenac, ceinétan ereiten baita hitza: baina ençun dutenean, bertan ethorten da Satan, eta kencen du hayen bihotzetan erein cẽ hitza.

16 Eta hauc dirade halaber leku harriçuetara hacia recebitzen dutenac: eta ençun dutenean hitza, bertan bozcariorequin recebitzen dute hura.

17 Eta eztute erroric berac baithan, baina iraute gutitaco dirade: guero heltzen denean tribulationeric edo persecutioneric hitzagatic, ber

tan ſcandalizatzen dirade.
18 Eta hauc dirade elhorri artera hacia recebitzen dutenac, hauc dirade, *diot*, hacia ençuten dutenac:
19 Baina mundu hunetaco anſiéc, eta * abraſtaſſunezco enganioac, eta berce gaucetaco guthiciéc barneraric ithotzen dute hitza, eta fructu gabetzen da. 1 *Tim.6.17*
20 Eta hauc dirade lur onera hacia recebitu dutenac, ceinéc hitza ençuten baitute, eta recebitzen, eta fructu ekarten, batac hoguey eta hamar, eta berceac hiruroguey, eta berceac ehun.
21 Erran ciecén halaber, * Ala candela ekarten da gaitzurupean, edo ohapean eçar dadinçat? eza candelerean eçar dadinçat? *Mat*. 5.15. *luc* 8.16. *eta*.11.31
22 * Ecen ezta deus ſecreturic aguerturen eztenic, edo eſtal ahal daitenic: baina campora ethorri *behar da*. *Mat*.10.26 *luc* 8.17. *eta* 12.2
23 Baldin nehorc ençuteco beharriric badu, ençun beça.
24 Guehiago errã ciecén, Gogoauçue cer ençuten duçuen: * cer neurriz neurturen baituçue, neurturen çaiçue, eta emendaturen çaiçue, çuey ençuten duçuenoy. *Mat*.7.2 *luc* .6.38
25 * Ecen duenari, emanen çayó: eta deuſic eztuenari, duena-ere edequiren çayó. *Mat*.13.12 *eta* 25.29. *luc* 8.18 *eta* 19.26
26 Guehiago erraiten çuen, Iaincoaren reſumá da, guiçón hacia lurrera egotziric gau eta egũn lo etzaten eta iaiquiten liçaten baten ançora.
27 Eta hacia ilkiten eta hatzen licén, harc ez-

laquiala nola,

28 Ecen bere buruz lurrac fructu ekarten du, behin belhar, guero buru, guero ogui bihi bethea buruän.

29 Eta aguertu denean fructua, bertã *guiçonac* du eçarten iguiteyá: ceren preſt baita vztá.

Mat.13.31 luc 13.18. 30 *Guero cioen, Cer irudi duela erranen dugu Iaincoaren reſumác? edo cer comparationez comparaturen dugu hura?

31 *Hura da* muſtarda haci bihibat beçala, cein lurrean ereiten denean, baita lurrean diraden haci gucietaco chipiena:

32 Baina erein den ondoan, goratzen da, eta *berce* belhar gucietaco handiena eguiten da: eta adar handiac eguiten ditu *hala* non ceruco choriec ohatzeac eguin ahal baititzaqueizte haren itzalean.

Mat.13.34 33 *Eta anhitz hunelaco comparationez tractatzen cerauen hitza, ençun ahal ciroitenaren araura.

34 Eta cõparatione gabe etzayen minçatzen: baina appartéã bere diſcipuluey declaratzen cerauzten gauça guciac.

Mat. 8.23. luc 8.22. 35 *Eta erran ciecén egun hartan, arraſtu cenean, Iragan gáitecen *vraren* berce aldera.

36 Eta populua vtziric har ceçaten hura vncian cen beçala: baina berce vncitchoac-ere b.. ciraden harequin.

37 Orduan altcha cedin haice buhumba handibat, eta bagác ſartzen ciraden vncira, *hala* non ia bethatzen baitzén.

38 Eta hura vnciaren guibeleco aldean cetzan lo bururdi baten gainean: orduan iratzartzen dute, eta diotsate, Magistruá, eztuc ansiaric ceren galduac goacen?

39 Eta iratzarri cenean mehatcha ceçan haicea, eta erran cieçón itsassoari, Ichil adi, eta gueldi adi. Orduan cessa cedin haicea, eta tranquilitate handi eguin cedin.

40 Eta erran ciecén Cergatic çarete horrela icior? nola eztuçue federic?

41 Eta ici citecen icidura handiz: eta erraiten çuten elkarren artean, Baina nor da haur, haiceac eta itsassoac, ere obeditzen baitute?

CAP. V.

*2 Demoniatua sendatzen. 7 Deabruac Christ eçagutzẽ 9 Legionea. 13 Deabruac permissionerequin vrdetara sartzen. 25 Odol iariatzez eri cen emaztea. 26 Haren dispendio medicuetan eguina. 34 Haren fedea. 39 Lo datzala erraiten hil denaz. 41 Iairusen alaba resuscitatzen.*

1 ETa * ethor citecen itsassoarẽ berce aldera, Gadarenoén comarcara. Mat. 8. 28.

2 Eta ilki cenean vncitic, ber tan aitzinera ethor cequión thumbetaric spiritu satsua çuen guiçombat:

3 Ceinec *bere* egoitea baitzuen thumbetan, eta cadenaz-ere nehorc ecin esteca ciroen.

4 Ceren anhitzetan cepoz eta cadenaz estecatu içan cenean hauts baitzitzan cadenác, eta çathica cepoac: eta nehorc ecin ceba ceçaqueen,

5 Eta bethiere egun eta gau mendietan eta thumbetan cen oihuz cegoela, eta bere buruäri harriz ceraunſala.

6 Eta ikuſſi çuenean Ieſus vrrundanic,laſter eguin ceçan eta gur cequión:

7 Eta oihuz voz goraz erran ceçan, Cer da hire eta ene artean, Ieſus Iainco ſubiranoaren Semea? adiuratzen aut Iaincoaren *parte*z ezneçã tormenta.

8 (Ecen erraiten ceraucan, Ilki adi ſpiritu ſatſuá, guiçon horrenganic)

9 Orduan interroga ceçan hura, Nola *da* hire icena? Eta ihardets ceçan, cioela, Legio *diat* icen: ecen anhitz gaituc.

10 Eta othoitz handi eguiten çeraucan, ezlitzan igor comarca hartaric campora.

11 Eta cen han mendi aldean vrdalde handibat alha cenic.

12 Eta othoitz eguin cieçoten deabru *hec* guciéc, cioitela, Igor gaitzac vrdetara, hetara ſar gaitecençat.

13 Eta permetti ciecén bertan Ieſuſec. Eta ilkiric ſpiritu ſatſuac ſar citecen vrdetara, eta oldar cedin vrdaldea gainetic behera itſaſſora(eta baciraden bi millaren inguruä) eta itho citecen itſaſſoan.

14 Eta vrdeac bazcatzen cituztenéc ihes eguin ceçaten, eta ekar citzaten berriac hirira eta cãpocoetara: Orduan ilki citecen ikuſtera cer eguin içan cen.

15 Eta ethorten dirade Ieſuſgana, eta ikuſten

dute demoniatu içan cena iarriric eta veztituric eta cençaturic, legionea vkan çuena *diot*: eta ici citecen.

16 Eta *haur* ikussi çutenéc erran ciecén hæy, nola demoniatuari heldu içan çayon, eta vrdéz.

17 Orduan *hec* has cequizquión othoitz eguiten parti ledin hayén comarquetaric.

18 Eta hura sarthu cenean vncira, othoiztez çayon demoniatu içan cena harequin licén.

19 Baina Iesusec etzieçón permetti, aitzitic erran cieçón, Habil eure etcherát euretara, eta conta iecec cein gauça handiac Iaunac eguin drauzquián, eta *nola* hiçaz pietate vkan duen.

20 Ioan cedin bada, eta has cedin predicatzen Decapolisen cein gauça handiac eguin cerautzan Iesusec: eta guciéc mireſten çuten.

21 Eta iragan cenean Iesus vncian berriz berce aldera, populu handi bil cedin harengana, eta cen itsas bazterrean.

*Mat.9.18. luc 8.41.*

22 *Eta huná, ethor cedin synagogaco principal Iairus deitzen cembat, eta ikussi çuenean hura, egotz ceçan bere buruä haren oinetara.

23 Eta othoitz handi eguiten ceraucan, cioela, Ene alabatchoa hurrenean duc: *othoitz eguiten drauat*, ethor adin, eta eçar ditzán escuac haren gainean, senda dadinçát eta vici den.

24 Eta ioan cedin *Iesus* harequin, eta populu handi çarreyón, eta hertsen çuten.

25 Eta emaztebat cen odol iariatzea hamabi vrthe *hetan* çuenic:

26 Eta anhitz sufritu vkan çuen anhitz medi-

cutaric, eta berea gucia deſpendatu çuen, eta etzén deus probetchatu, baina gaizcoatuago içan cen.
27 *Hura* Ieſuſez minçatzen ençunic, ethor cedin gendetzean guibeletic, eta hunqui ceçan haren arropá.
28 Ecen erraiten çuen, Baldin haren abillamenduac hunqui baditzat ber, ſendaturen naiz
29 Eta bertan agor cedin haren odol ithurria: eta ſendi ceçan *bere* gorputzean ſendatu cela plaga hartaric.
30 Eta bertan Ieſuſec bere baithan eçaguturic harẽganic ilki içan cen verthutea, itzuliric gendetzean, erran ceçan, Norc hunqui ditu ene abillamenduac?
31 Eta erran cieçoten bere diſcipuluec, Badacuſſac gendetzeac hertſen auela, eta dioc, Norc hunqui nau?
32 Eta inguru behatzen çuen, haur eguin çuena ikus leçançat.
33 Eta emaztea beldurric eta ikararic, nola baitzaquian hura baithã eguin içan cena, ethor cedin, eta egotz ceçan bere buruä haren aitzinera, eta erran cieçón eguia gucia.
34 Eta harc erran cieçón, Alabá, eure fedeac ſaluatu au, habil baquerequin, eta aicén ſendo eure plagatic.
35 Oraino hura minço cela ethor citecen *batzu* ſynagogaco principalarenetic, cioitela, Hire alabá hil duc, cergatic fatigatzen duc Magiſtrua?
36 Eta Ieſuſec erraiten cen hitz haur ençun

çuen beçain ſarri, diotſa ſynagogaco principalari, Eztuála beldurric, ſinhetſac ſolament.

37 Eta etzeçan permetti nehor iarreiqui lequión Pierris, eta Iacques, eta Ioannes Iacqueſen anayea baicen.

38 Guero ethor cedin ſynagogaco principalaren etchera, eta ikus citzan tumultoa, eta nigarrez ceudenac, eta dolu handi ekarten çutenac.

39 Eta ſarthuric dioſte, Cergatic tormentatzẽ çarete, eta nigarrez çaudete? neſcatchá ezta hil, baina lo datza.

40 Eta irriz ceuden harçaz: baina harc guciac idoquiric campora, har citzan neſcatcharen aitá eta amá, eta harequin ciradenac, eta ſartzen da neſcatchá cetzan lekura.

41 Eta harturic neſcatcharen eſcua, diotſa, Talitha-cumi: errã nahi baita, Neſcatchá (hiri dioſnat) iaiqui adi.

42 Eta bertan iaiqui cedin neſcatchá, eta baçabilan: ecen hamabi vrthetacoa cen: eta ſpanta mendu handiz ſpanta citecen.

43 Eta haguitz manatu vkan ditu, nehorc haur ezlaquian: eta erran ceçan iatera neſcatchari eman lequión.

## CAP. VI.

*2 Christ bere herrian ez recebitzen. 3 Baina harçaz dirade scandalizatzen. 6 Nazarenoén incredulitatea. 7 Apostoluac igorten. 12 Emendamendua. 13 Oliostatzea. 17 Ioannes presonér eguin. Herodias. 20 Herodes Ioannesen beldur. 27 Ioannesi buruä edequi. 29 Haren gorputza ohortze. 30 Apostoluac predicatzetic itzuli. 35 Borz oguiezco miracului. 48 Apostoluén itsassoco tormentá. 49 Fantosmá. 50 Fedea. 56 Eriac sendatu.*

*Matth.13.54. luc 4.16.* 1 GVero * parti cedin handic, eta ethor cedin bere herrira, eta baçarreitzã bere discipuluac.

2 Eta ethorri ceneã Sabbathoa, has cedin synagogán iracastẽ, eta ençuten çutenetaric anhitzec mireſten çuten, cioitela, Nondic huni gauça hauc? eta ceric da huni eman içan çayon sapientia haur, eta are hunelaco verthuteac hunen escuz eguiten baitirade?

3 Ezta haur charpanter? Mariaren seme, Iacquesen eta Iosesen eta Iudaren eta Simonen anaye? eztirade hunen arrebac-ere hemen gu baithan? Eta scandalizatzen ciraden hartan.

*Ioan 4.44.* 4 Eta erraiten cerauen Iesusec, * Ezta Prophetabat desohoratzen bere herrian, eta ahaidén artean, eta bere etchean baicen.

5 Eta ecin eguin çuen han verthuteric batre, cembeit eri bakoitz, escuac hayén gaineã eçarriric, senda baitzitzan baicen.

6 Eta miraz cegoén hayén incredulitateagatic,

*Matt.9.35 Luc 13.22.* *eta inguratzẽ cituen burguäc inguru, iracasten

ari cela.

7 *Orduan dei citzan hamabiac, eta has cedin hayén igorten birá: eta eman ciecén bothere spiritu satsuén gainean.

Matt.10.1
leben 3.14.
luc 9.1.

8 Eta mana citzan ezleçaten deus har bidecotzat, makila hutsa baicen: ez maletaric, ez oguiric, ez diruric guerricoan.

9 Baina *sandaleac iaunciac lituzten eta birá arropaz ezlitecen vezti.

Act.12.8.

10 Eta erraiten cerauen, Non-ere sarthuren baitzarete etche batetarra, çaudete han handic ilki arterano.

11* Eta norc-ere recebituren ezpaitzaituzte, eta çuec ez ençunen, hādic partitzean, *iharros eçaçue çuē oinén azpico errhautsa, testimoniagetan hayén contra. Eguiaz diotsuet, emequiago tractatuac içanen diradela Sodomacoac eta Gomorrhacoac iudicioco eguneán, ecen ez hiri hura.

Mat.10.14
luc 9.5.
Act.13.51
eta 18.6.

12 Eta *hec* partituric predicatzen çuten *batbedera* emenda ledin.

13 Eta deabru anhitz campora egoizten çutén: eta *vnctatzē çutén olioz anhitz eri, eta sendatzen cituzten.

Iac.5.14.

14 *Eta ençun ceçan regue Herodesec minçatzen (ecen haren icena cen famatua) eta erran ceçan, Ioannes batheyatzen ari cena, resuscitatu içan da hiletaric, eta halacotz verthutéc obratzen duté hartan.

Matt.14.1
luc 9.7.

15 Bercéc cioiten, Elias da: Eta bercéc cioiten, Propheta da, edo Prophetetaric bat beçalaco.

Luc 3.19 16 *Bada *hori* ençunic Herodeſec dio, Haur da Ioannes nic buruä edequi draucadana, hura reſuſcitatu da hiletaric.

17 Ecen Herodes hunec *gende* igorriric har ceçan Ioannes, eta eſteca ceçan preſoindeguian, Herodias bere anaye Philipperen emaztearen cauſaz, ceren hura emazte hartu baitzuen.

18 Ecen erraiten ceraucan Ioanneſec Herode-
Leui.18.16 ſi, *Eztuc ſori euri anayeren emaztea duán.

19 Halacotz Herodias ayher çayón, eta hil eraci nahi çuen, baina ecin ceçaqueen.

20 Ecen Herodes beldur çayón Ioanneſi, eçaguturic ecen hura *cela* guiçon iuſtoa eta saindua, eta ohore ekarten ceraucan: eta hura ençunic anhitz gauça eguiten çuen, eta gogotic hura ençuten çuen.

21 Bada egun carázcoa ethorri cenean, Herodeſec bere ſor eguneco banqueta eguiten cerauenean princiey eta capitainey eta Galileaco principaley:

22 Eta ſarthuric Herodiaſen alabá dançatu cenean, eta Herodeſi eta harequin mahainean iarriric ceudeney atſeguin eguin cerauenean, Reguec diotſa neſcatchari, Eſca aquit cer-ere nahi baitun, eta emanen draunat.

23 Eta cin eguin cieçón: Eſcaturen aitzaitadan gucia emanen draunat, neure reſumaren erdirano.

24 Eta harc ilkiric erran cieçón bere amari, Cer eſcaturen naiz? Eta harc erran ceçan, Ioannes Baptiſtaren buruären.

25 Eta bertan ſarthuric affectionatuqui Reguegana, eſca cequión, cioela, Nahi diat orain bertan eman dieçadán platean Ioannes Baptiſtaren buruä.

26 Eta Reguec haguitz triſteturic, cinagatic eta harequin mahainean iarriric ceudenacgatic, eztu iraitzi nahi vkan.

27 Eta bertan Reguec,igorriric borreroa,mana ceçan ekar ledin haren buruä: harc bada ioanic edequi cieçón buruä preſoindeguian.

28 Eta ekar ceçan haren buruä platean, eta eman cieçón hura neſcatchari, eta neſcachác eman cieçón bere amari.

29 Eta *hori* ençunic haren diſcipuluac ethor citecen, eta eraman ceçaten haren gorputza, eta eçar ceçaten thumbán.

30 *Eta bil citecen Apoſtoluac Ieſuſgana, eta conta cieçoten eguin eta iracatſi çuten gucia. *Luc 9.10.*

31 Eta erran ciecén, Çatozte ceuróc appart leku deſertu batetara, eta repoſa çaitezte guti-bat:ecen anhitz ciraden ethorten eta ioaiten ciradenac:eta iateco aicinaric-ere etzutén.

32 * Ioan citecen bada leku deſertu batetara vncian appart: *Mat.14.13 luc.9.10.*

33 Baina ikus citzan populuac ioaiten, eta eçagut ceçaten hura anhitzec: eta oinez hiri gucietaric laſter eguin ceçaten hara, eta aitzin cequizten hæy,eta bil citecen harengana.

34 *Orduan ilkiric ikus ceçan gendetze handia Ieſuſec,eta compaſſione har ceçan heçaz: ecen ardi artzain gabeac beçala ciraden:*eta has *Matt.9.36 eta 14.14. Luc 9.11.*

cequién anhitz gauçaren iracaſten.

Mat.14.15 35 *Eta nola ia berandua baitzén, ethorri içan çaizcan bere diſcipuluac, erraiten çutela, Deſertu duc leku haur, eta ia beranduā duc:

36 Eyec congit, inguruco herrietarát eta burguëtarat ioanic, berén ogui eros deçaten çát : ecen cer ian deçaten eztié.

37 Eta harc ihardeſten çuela erran ciecén, Eyeçue çuec iatera. Orduan diotſate, *Ala* ioanic eroſſiren dugu ber-ehun dineroren oguia, eta emanen drauegu iatera?

38 Eta harc dioſte, Cēbat ogui dituçue? çoazte eta ikar eçaçue. * Eta iaquin dutenean dioite, Borz, eta bi arrain.

Mat.14.17 luc 9.13. ioan 6.9.

39 Orduan mana citzan, iar eraci litzaten guciac mahaintaraz belhar pherde gainean.

40 Eta iar citecen arencaz, ehuná, eta berroguey eta hamarná.

41 Eta borz oguiac eta bi arrainac hartu cituenean, beguiac cerurát altchaturic, gratiác renda citzan, eta hauts citzan oguiac: eta eman cietzén bere diſcipuluey, hæy aitzinera eçar lietzençat: eta bi arrainac parti cietzén guciey.

42 Eta ian ceçaten guciéc, eta reſſaſia citecen.

43 Eta goiti ceçatē çathietaric hamabi ſaſquitara, eta arrainetaric *cerbait*.

44 Eta ian çutenac ciraden borz milla guiçonen inguruä.

45 Guero bertan bere diſcipuluac ſar eraci citzan vncira, eta aitzinean ioan eraci *itſaſſoaren* berce aldera Bethſaida alderát, berac populuari

congit

ongit lemon bizquitartean.

46 Eta hec igorri cituenean, mendira ioan cedin othoitz eguitera.

47 *Eta arrastu cenean, vncia cen itsassoaren erdian, eta hura bera leihorrean.

*Marc 14. 23. ioan 6. 16.*

48 Eta ikus ceçan pena çutela, aurthiquiten: (ecen haice-contra çutén) eta gauären laurgarren veilla irian ethor cedin hetara, itsas gainez çabilala: eta nahi cituen hec iragan.

49 Baina hec hura ikussiric itsas gainez çabilala, vste çuten fantosmabat cela: eta oihu eguin ceçaten.

50 Ecen guciéc ikusten çuten hura, eta trubla citecē: baina bertā minça cequién, eta erran ciecén, Sporça çaitezte, ni naiz, etzaretela beldur.

51 Orduan igan cedin hetara vncira: eta sossega cedin haicea: non are tinquetz spantago baitzitecen berac baithan, eta mirets ceçaten.

52 Ecen etzutén aditu oguiéz *eguin içan cena*: ceren hayén bihotza gogortua baitzén.

53 *Eta berce aldera iragā ciradenean, ethor citecē Genesarethco lurrera, eta portu har ceçatē.

*Matth. 14. 34.*

54 Eta vncitic ilki ciradenean, bertan eçagut ceçaten hura.

55 Eta laster eguin çutenean inguruco comarca hura gucia, has citecen ohetan erién ekarten, non cela hura ençuten baitzuten, *hara*.

56 Eta nora-ere sar baitzedin burguëtara, edo hirietara, edo parropioetara, placetan eçarten cituzten eriac, eta othoitz eguiten ceraucaten haren arropa ezpaina berere hunqui leçaten: eta hunquitzen çutén guciac sendatzen ciraden.

## CAP. VII.

*2 Escuac ikuci gaberic iatea. 4, 8 Guiçonén manamenduac eta doctriná. 10 Aitametaratco eguimbidea. 15 Nehor satsutzen duten gauçác cein. 21 Bihotzetic heldu diraden gauçác. 25 Chananea. 27 Haourrén oguia. 32 Gor eta mothel cena sendatu. 36 Iesus laudatu eta magnificatu.*

*Matt.15.8* 1 * ORduan bil citecẽ harẽgana Phariseuac, eta Ierusalemetic ethorri içan ciraden Scriba batzu.

2. Eta *hec* ikussi çutenean harẽ discipuluetaric batzuc escu communez (erran nahi baita, ikuci gabéz) iaten çutela oguia, arrangura citecen.

3 Ecen Phariseuéc eta Iudu guciéc, maiz escuac ikuciric baicen, eztute iaten, aitzinecoen ordenançác eduquiten dituztela.

4 Eta merkatutic *itzultzen, diradenean*, ikuciac ezpadirade, eztuté iaten. Anhitz berce gauçaric-ere bada beguiratzeco hartu dutenic, nola baitirade goporrén ikutzeac, eta cubenac, eta cobrezeco vncienac, eta ohenac.

5 Guero interrogatzen dute Phariseuéc eta Scribéc, Cergatic hire discipuluac eztabiltza aitzinecoen ordenancén araura, baina escuac ikuci gabe iaten dute oguia?

6 Baina harc ihardesten çuela erran ciecén, Segurqui vngui prophetizatu vkan du Esaiasec çueçaz hypocritoz, scribatua den beçala, *Esa.29.13.* * Populu hunec ezpainez ohoratzẽ nau, baina hayén bihotza vrrun da eneganic.

7. Baina alferretan cerbitzatzen naute, iraca-

ſten dituztela doctrinatzat guiçonén manamenduac.

8 Ecen Iaincoaren manamendua vtziric, guiçonen ordenançá eduquiten duçue, *hala nola*, cubén eta goporrén ikutzeac:eta hunelaco berce gauçaric anhitz eguiten duçue.

9 Erraité cerauen halaber, Vngui *nombait* iraizten duçue Iaincoaren manamendua, çuen ordenançá beguira deçacuençát.

10 Ecen Moyſeſec erran du, *Ohoraitzac eure aita eta eure ama:eta, *Aita edo ama maradicaturen duena, herioz hil bedi.

*Exo. 20.12 deut. 5.16. ephe.6.2. Exo. 21.17 leuit.20.9. prou.20.20*

11 Baina çuec dioçue, Baldin norbeitec aitari edo amari baderró, Eneganic *içanē den* corbana (erran nahi baita donoa) probetchaturen çaic, *hoguen gabe date hura.*

12 Eta eztuçue permettitzē harc deus guehiagoric eguin dieçón bere aitari edo bere amari:

13 Ezdeuſten duçuela Iaincoaren hitza *ceuroc* ordenatu duçuen ordenāçáz: eta hunelaco berce gauçaric anhitz eguiten duçue.

14 *Guero deithuric populu gucia beregana, erran ciecén, Beha çaquizquidate guciac, eta adi eçaçue.

*Mat.15.10*

15 Ezta deus guiçonaren campotic, hura baithan ſartzen denic, hura ſatſu ahal deçaquenic: baina harenganic ilkiten diraden gauçác dirade, guiçona ſatſutzen dutenac.

16 Nehorc ençuteco beharriric badu ençun beça.

17 Guero etchean ſarthu cenean populutic *re-*

*tiraturic*, interroga ceçaten bere diſcipuluéc comparationeaz.
18 Eta dioſte,Horrela çuec-ere adimendu gabe çarete?Eztuçue aditzen,ecen campotic guiçona baithan ſartzen diradenetaric deuſec, ecin hura ſatſu deçaquela?
19 Ecen ezta ſartzen haren bihotzera, baina ſabelera, eta ilkiten da campora retreitera, chahutzen dituela vianda guciac.
20 Cioſten bada, Guiçonaganic ilkiten dena da,guiçona ſatſutzen duena.
*Gene.6.5, eta 8.21.*
21 *Ecen barnetic, guiçonén bihotzetic ilkiten dirade penſamendu gaichtoac, adulterioac, paillardiçác,hiltzecác,
22 Ohoinqueriác, auaritiác, gaichtaqueriác, enganioa,inſolentia, bekaizteria, gaitzerraitea, ſuperbiá,erhotaſſuna:
23 Gaichtaqueria hauc guciac barnetic ilkiten dirade,eta ſatſutzen dute guiçona.
*Matth.15.21.*
24 *Eta handic iaiquiric ioan cedin Tyreco eta Sidongo comarquetarát: eta etche batetan ſarthuric, etzuen nahi nehorc iaquin leçan: baina ecin eſtali içan da.
25 Ecen harçaz ençunic emaztebatec, ceinen alabatchoac baitzuen ſpiritu ſatſua, ethorriric egotz ceçan bere buruä haren oinetara,
26 (Eta emaztea cen Grec,nationez Syrophenisſiana) eta othoitz eguiten ceraucan campora egotz leçan deabrua haren alabaganic.
27 Eta Ieſuſec erran cieçón, Vtzan behin haourrac reſſaſia ditecen:ecen eztun gauça bidez-

coa haourrén oguiaren hartzea, eta chakurrey egoiztea.
28 Eta harc ihardets ceçan, eta erran cieçón, Hala duc Iauna: badaric-ere chakurréc iaten dié mahain azpian haourrén appurretaric.
29 Orduan erran cieçón, Hitz horrēgatic ohá, ilki dun deabrua hire alabaganic.
30 Eta ioan içan cenean bere etchera, eriden ceçan deabrua ilki cela, eta alabá ohe gainean cetzala.
31 Guero partituric Tyreco eta Sidongo quoarteretaric, ethor cedin Galiléaco itſaſſora, Decapoliſco comarquén arteaz.
32 Orduan preſentatzen draucate gor nequez minço cembat, eta othoitz eguiten eſcua gainean eçar lieçón.
33 Eta hura gendetzetic appart harturic, eçar citzan bere erhiac haren beharrietan: eta thu eguinic, hunqui ceçan haren mihia.
34 Guero cerurat beguiac altchaturic ſuſpirio eguin ceçan, eta erran cieçón Ephphata, erran nahi baita, Irequi adi.
35 Eta bertan irequi citecen haren beharriac, eta lacha cedin haren mihico etchequidurá, eta minço cen claroqui.
36 Eta mana citzan nehori ezlerroten: baina cembat-ere harc defenda baitziecén, vnguiz guehiago publicatzen çutén.
37 Eta guciz miraculu eſtē çutén, cioitela, *Vngui gauça guciac eguin ditu: gorrey ençun eraciten draue, eta mutuac minça eraciten ditu.

Gene. 1.31
Eccl. 39.21

## CAP. VIII.

*5 Çazpi oguiezco miraculua. 11 Phariseuac signo esquez egon. 15 Phariseuén eta Herodianoén altchagarria. 22 Itsua sendatzen. 27 Christezco reputationea. 29 Iesus dela Christ. 31 Christec bere passionea aitzinetic declaratzen. 33 Pierris Satan deitzen. 34 Christi iarreiquitea, Crutzearé ekartea. 35 Viciaren saluatzea eta galtzea. 38 Christez ahalque içatea.*

Matth.15.32.

1 * EGun hetan, gucizco gẽdetze handia cen beçala, eta ezpaitzuten cer ian leçaten, dei citzan beregana Iesusec bere disciPuluac, eta erran ciecen,

2 Compassione dut populuaz: ecen ia hirur egun du enequin daudela, eta eztuté cer ian deçaten.

3 Eta baldin igor baditzat baruric *cein* bere etcherat, flacaturen dirade bidean: ecen horietaric batzu vrrundanic ethorri içan dirade.

4 Eta ihardets cieçoten bere disciPuluéc, Nondic hauc hemen nehorc ressasia ahal litzaque oguiz desertuan?

5 Eta interroga citzan, Cembat ogui dituçue? Eta hec erran ceçaten, Çazpi.

6 Orduan mana ceçan populua iar ledin lurrean: eta harturic çazpi oguiac, gratiác rendatu eta, hauts citzan, eta eman cietzen bere disciPuluey, presenta litzatẽçat: eta presentatu cituzten populuaren aitzinean.

7 Bacituzten halaber arrain guti batzu, eta gratiác rendaturic, erran ceçan hec-ere presenta litzaten.

8 Ian ceçatẽ bada,eta reſſaſia citecen:eta altcha citzaten çathi ſoberatuetaric çazpi ſaſquitara.

9 Eta ian çutenac ciraden laur millaren inguruä,guero eman ciecén congit.

10 *Eta bertã vncira ſarthuric bere diſcipulue- *Mat.15.39* quin,ethor cedin Dalmanutha bazterretara.

11 *Eta ethor citecen Phariſeuac, eta has cite- *Matt.16.1* cen harequin ihardụquiten,hari cembeit ſignocen ceruțic galdez çaizcala, hura tentatzen çutela.

12 Orduan barnadanic beré ſpirituan ſuſpirio eguinic, errã ceçan, Cergatic generatione haur ſigno galdez dago?eguiaz diotſuet generatione huni ſignoric etzayola emanen.

13 *Eta hec vtziric,vncian berriz ſarthuriç ira- *Mat.16.4.* gan cedin berce aldera.

14 *Eta ogui hartzera *diſcipulucy* ahanz ce- *Matt.16.5* quién : eta oguibat baicen etzutén berequin vncian.

15 Eta mana citzan,cioela,Gogoauçue *eta* beguira çaitezte Phariſeuén altchagarritic, eta Herodéſen altchagarritic.

16 Eta baciharduçaten elkarren contra, cioitela,Ceren oguiric eztugun *da hori*.

17 Eta *hori* eçagutu çuenean Ieſuſec,erran ciecen,Cer diharducaçue,ceren oguiric eztuçuen? oraino eztüçue conſideratzen ez aditzen? oraino gogortua duçue çuen bihotza.

18 Beguiac dituçuelaric, eztacuſſaçue? eta beharriac dituçuelaric, eztançuçue ? eta etzarete orhoit?

Ioan 6. 12. 19 *Borz oguiac hautſi nerauztenean borz milla *guiçoney* cembat ſaſqui çathiz beteric altchatu centuzten? Diotſate, Hamabi.

20 Eta çazpiac laur milla *guiçoney hautſi nerauztenean* cembat ſaſqui çathiz betheric altchatu cẽtuzten? Eta hec erran cieçoten, Çazpi,

21 Eta erran ciecén, Nola eztuçue aditzen?

22 Eta ethor cedin Bethſaidara: eta preſenta cieçoten itſubat, eta othoitz ceguioten, hura hunqui leçan.

23 Orduan itſuaren eſcua harturic, eraman ceçan burgutic campora: eta harẽ beguietara thu eguinic, eta eſcuac haren gainean eçarriric, interroga ceçan, deus balacuſſanez.

24 Eta *harc* beguiac altchaturic erran ceçan, Badiacuſquiat guiçonac, ecen ohartzen nitziayec arboreac dirudiтela dabiltzala.

25 Guero berriz eçar citzan eſcuac haren beguién gainean, eta *berriz* goiti beha eraci ciecón: eta ſenda cedin, eta ikuſten cituen vrrundanic-ere claroqui guciac.

26 Orduan *Ieſuſec* igor ceçã hura bere etcherát, cioela, Ezadila burgura ſar, eta nehori ezterroala burguän.

Mat. 16. 13 lúc 9. 19. 27 *Eta Ieſus eta haren diſcipuluac *handic* ilkiric ethor citecen Philipperen Ceſarea *deitzen deneco* burguëtara: eta bidean interroga citzan bere diſcipuluac, cioſtela, Nor naicela ni dioite guiçonéc?

28 Eta hec ihardets ceçaten, Ioãnes Baptiſta, eta bercéc Elias, eta bercéc Prophetetaric bat,

29 Orduan harc dioſte, Eta çuec ni nor naicela dioçue? Eta ihardeſten duela Pierriſec diotſa, Hi aiz Chriſt.

30 Orduan debeta citzan mehatchurequin ne hori *hura* ez lerroten harçaz.

31 Eta has cedin hayén iracaſten, ecen behar cela guiçonaren Semeac anhitz ſuffri leçan, eta reproba ledin Ancianoéz, eta Sacrificadore principaléz, eta Scribéz, eta hil ledin, eta hereneco egunean reſuſcita ledin.

32 Eta claroqui propos hunez minçatzen cen. Orduan apparta ceçan Pierriſec, eta has cequión reprotchatzen.

33 Eta harc itzuliric, eta bere diſcipuluetarat behaturic reprotcha ceçan Pierris, cioela, Guibelerat adi eneganic Satan: ecen eztituc aditzen Iaincoaren diraden gauçác, baina guiçonén *diradenac*.

34 Guero populua beregana deithuric bere diſcipuluequin, erran ciecén,* Norc-ere nahi baitu ene ondoan ethorri, renuntia beça bere buruäz, eta har beça bere crutzea, eta berrait niri.

*Mat.10.38 eta 16.24 luc 9.23. eta 14.27*

35 * Ecen norc-ere nahi vkanen baitu bere vicia ſaluatu, galduren du hura: baina norc-ere galduren baitu bere vicia enegatic eta Euangeliogatic, ſaluaturen du hura.

*Mat.10 39 eta 16.25. luc 9.24. eta 17.33 ioan.12.25*

36 Ecen cer probetchu du guiçonac, baldin mundu gucia irabaz badeça, eta bere arimá gal badeça?

37 Edo cer emanen du guiçonac bere arimaren recompenſamendutan?

Mat.10.33 luc 9.26. eta 12.8 38 * Ecen nor-ere ahalque içanen baita niçaz eta ene hitzéz generatione adultera eta bekatore hunetan, guiçonarẽ Semea-ere ahalque içanen da harçaz, dathorrenean bere Aitaren glorián Ainguerு ſainduequin.

## CAP. IX.

*2 Chriſt tranſfiguratzen. 7 Hari behatzera hodeyetic manatzen. 11 Elias, Ioannes Baptiſta. 17 Demoniatua. 23 Sinheſtea. 29 Othoitzá eta barura. 31 Chriſtec bere paſſionea aitzinetic erraiten. 36 Haourbat beſſoetara hartzen. 41 Chriſten icenean emaitea. 43, 45, 47 Scandalizatzen duen eſcuaz, oinaz eta beguiaz. 44 Hiltzen eztten harraz. 50 Baquez içateco.*

Mat.16.28 luc 9.27 1 * ERraiten ceraue halaber, Eguiaz erraiten drauçuet, ecen badiradela hemen preſent diradenotaric batzu, herioa daſtaturen eztutenic, Iaincoarẽ reſumá botherereq uin ethorriric dacuſqueiteno.

Mat.17.1. luc 9.28. 2 * Eta ſey egunen buruän har citzan Pierris, eta Iacques eta Ioannes, eta eraman citzan mendi gora batetara appart hec berac, eta tranſfigura cedin hayén aitzinean.

3 Eta haren abillamenduac argui citecen, eta haguitz churit elhurra beçalá, halaca non bolaçalec lurraren gaineã ecin hain churi eguin baileçaque.

4 Guero aguer cequién Eliës Móyſeſequin, eta minço ciraden Ieſuſequin.

5 Orduan Pierriſec hitza harturic diotſa Ieſuſi, Magiſtruá, on duc gu hemen garén: eguin ditzagun bada hirur tabernacle, bat hire, eta bat Moyſeſen, eta bat Eliaſen.

6 Eta cer minço cen etzaquian: ecen icituac ciraden.

7 Eta eguin cedin hodeybat hec eſtali cituenic: eta ethor cedin vozbat hodeyetic, cioela, Haur da ene Seme maitea: huni beha çaquizquiote.

8 Eta bertan inguru behaturic, etzeçaten ikus nehor guehiagoric, Ieſus bera baicen berequin

9 * Eta hec menditic iauſten ciradela, mana citzan, nehori ezlietzoten erran ikuſſi cituzten gauçác, guiçonaren Semea hiletaric reſuſcitatu licenean baicen. *Mat.17.9*

10 Eta *hec* erran haur eduqui ceçatẽ berac baithan, elkarri galde eguiten ceraucatela, cer erran nahi çuen, hiletaric reſuſcitatze harc,

11 Guero interroga ceçaten, ciotela, Cergatic dioite Scribéc ecen * Elias lehen ethorri behar dela? *Malach.4.5.*

12 Eta harc ihardeſten çuela erran ciecen, Segur Eliaſec lehen ethorriric bere ſtaturaco ditu gauça guciac: eta * ſcribatua den beçala guiçonaren Semeaz, *behar da* anhitz ſuffri deçan, eta ezdeuſetan eduqui dadin. *Eſa.53.4*

13 Baina erraiten drauçuet ecen Elias ethorri içan dela, eta hari eguin nahi ceraucaten gucia, eguin draucatela, * harçaz ſcribatua den beçala. *Malach.4.5.*

14 * Eta diſcipuluetara ethorriric, ikus ceçan gendetze handibat hayén inguruän, eta Scribéc *Mat.17.14 luc 9.38*

hequin cihardúcatela.

15 Eta bertan gendetze gucia, hura ikuſſiric, ſpanta cedin: eta *harengana* laſter eguinez ſaluta ceçaten.

16 Orduan interroga citzan Scriba hec, Cer di harducaçue çuen artean?

17 Eta ihardeſten çuela gendetzecoetaric batec, erran ceçan, Magiſtruá, ekarri diat neure ſemea hiregana, ceinec baitu ſpiritu mutubat.

18 Eta non-ere har baiteça, çathicatzen dic: eta orduan haguna diarioc, eta garraſcots bere hortzez eguiten dic, eta eyarthu dihoac: eta erran diraueat hire diſcipuluey egotz leçaten cam pora, eta ecin eguin dié.

19 Eta harc ihardeſten çuela erran ceçan, O natione ſinheſte gabea, noizdrano ſinean çuequin içanen naiz? noizdrano ſinean ſupportaturen çaituztet? ekarçue hura enegana.

20 Orduan ekar ceçaten harengana: eta ikuſſi çuenean, bertan ſpirituac çathica ceçan hura, eta lurrera eroriric iraulzcatzen cen haguna lariola.

21 Orduan interroga ceçan *Ieſuſec* haren aita, Cembat dembora du haur heldu çayola? Eta harc diotſa, Haourra-danic.

22 Eta anhitzetan ſura egotzi dic eta vrera, deſeguin leçançat: baina deus ahal badaguic, hel aquigu, guçaz compaſſione harturic.

23 Eta Ieſuſec erran cieçón, Baldin hori ſinhets ahal badeçac, gauça guciac dituc poſſible ſinheſten duenaren.

24 Eta bertan haour aitác oihuz cegoela nigar requin erran ceçan, Sinheſten diat, Iauna, hel aquio ene incredulitateari.

25 Eta ikuſſiric Ieſuſec ecen populua laſterca elkarganatzen cela, mehatcha ceçan ſpiritu ſatſua, ciotſala, Spiritu mutuá eta gorrá, nic aut manatzen, Ilki adi horrenganic, eta guehiagoric ez adila ſar hori baithan.

26 Eta *ſpiritua* oihu eguinic eta hura gaizqui çathicaturic, ilki cedin: eta *haourra* hila beçalaca cedin, *hala* non anhitzec erraiten baitzuten ecen hil cela.

27 Baina Ieſuſec harén eſcua harturic, chuchēt ceçan hura, eta iaiqui cedin.

28 Eta etchean ſarthu cenean, bere diſcipuluéc interroga ceçaten appart, Cergatic guc hura ecin campora egotzi dugu?

29 Eta erran ciecén, *Deabru* mota hura bercela ecin ilki daite orationez eta barurez baicē.

30* Eta handic ilkiric, elkarrequin çabiltzan Galilean gaindi: eta etzuen nahi nehorc iaquin leçan.

*Mat.17.12 luc 9.22.*

31 Ecen iracaſten cituen bere diſcipuluac, eta cioſten, Guiçonaren Semea liuraturen da guiçonén eſcuetara, eta hilen duté: baina hilic, heréneco egunean reſuſcitaturen da.

32 Baina hec erran haur etzuten aditzen, eta beldur ciraden haren interrogatzera.

33 *. Eta ethor cedin Capernaumera: eta etchera cenean, interroga citzan, Cer bidean ihardu quiten cenduten elkarren artean?

*Mat.18.1. luc 9.46.*

34 Eta hec ichil citecen: ecen elkarren contra ihardurqui çutén bidean, cein *cen* berceac baino handiagoa.

35 Eta iarri cenean, dei citzan hamabiac, eta errã ciecén, Baldin nehor lehẽ içã nahi badá, gucietaco azquenén içanẽ da, eta guciẽ cerbitzari.

36 Eta haourtchobat harturic eçar ceçã hayen arteã, eta hura bessoetara harturic, erran ciecén,

37 Norc-ere hunelaco haourtchoetaric bat recebituren baitu ene icenean, ni recebitzen nau: eta norc-ere ni recebitzen bainau, eznau ni recebitzen, baina ni igorri nauena.

Luc 9.49.

38 * Eta ihardets cieçón Ioannesec, cioela, Magistruá, ikussi diagu cembeit hire icenean deabruac campora egoizten cituenic, cein ezpeitarreicu guri: eta debetatu diagu hura, ceren ezpetarreicu guri.

39 Eta Iesusec dio, Ezteçaçuela hura debeta:

1. Cor. 12.3

* ecen ezta nehor ene icenean verthuteric eguiten duenic, eta bertan niçaz gaizqui minça ahal daitenic.

40 Ecen gure contra eztena, gure alde da.

Mat. 10.42

41 * Ecen norc-ere edatera emanen baitrauçue beirebat vr̃ ene icenean, ceren Christenac çareten, eguiaz diotsuet, eztuela galduren bere saria.

Mat. 18.6. luc 17.1.

42 * Eta norc-ere scandalizaturen baitu ni baithan sinhesten duten chipi hautaric bat, hobe lu que errota harribat haren leppoaren inguruän eçar ledin, eta itsassora egotz ledin.

Mat. 5.30. eta 18.8

43 * Eta baldin eure escuac trebuca eraciten bahau, trenca eçac hura: hobe duc hire, escu ba-

koitzdun vicitzean ſar adin, ecen ez bi eſcuac dituala: gehennara ioan adin, behin-ere iraunguiten ezten ſura.

44 * Non hayén harra ezpaita hiltzen, eta ſua ez iraunguiten. *Eſa.66.24.*

45 Eta baldin eure oinac trebuca eraciten, bahau, trenca eçac hura, hobe duc hire, mainguric vicitzean ſar adin, ecen ez bi oinac dituala gehẽnara egotz adin, behin-ere iraunguitẽ eztẽ ſura.

46 Non hayen harra ezpaita hiltzen, eta ſua ez iraunguiten.

47 Eta baldin eure beguiac trebuca eracitẽ bahau, idocac hura, hobe duc hire, begui bakoitzdun Iaincoaren reſumán ſar adin, ecen ez bi beguiac dituala ſuco gehennara egotz adin:

48 Non hayén harra ezpaita hiltzen, eta ſua ez iraunguiten.

49 Ecen batbedera ſuz gaciturén da:* eta ſacrificio gucia gatzez gaciturén da. *Leui.2.13.*

50 * Gauça ona da gatza, baina baldin gatza gueçat badadi cerçaz hura gaciturén duçue? Auçue ceuróc baithan gatz, eta baque auçue elkarren artean. *Mat.5.13.* *luc 14.34.*

## CAP. X.

*2 Senhar emaztén ſeparationeaz. 13 Chriſti preſentatu içan çaizcan haourrez. 16 Eſcuen impoſitioneaz. 21 Chriſti iarreiquiteaz. 33 Chriſtec aitzinetic declaratzen nola hil behar den. 35 Zebedeoren ſemén requeſtá. 45 Chriſt gure miniſtre. 46 Itſua arguitu.*

1 GVero handic partituric, ethor cedin Iudeaco aldirietara Iordanaren berce aldeaz: eta berriz gendetze bil cedin harengana: eta ohi beçalà berriz iracaſten cituen.

2 Orduan ethorriric Phariſeuéc interroga ceçaten tentatzen çutela, Sori da guiçonac bere emaztea vtzi deçan?

3 Baina harc ihardeſten çuela erran ceçan, Cer manatu drauçue Moyſeſec?

Deut.24.1. 4 Eta hec erran ceçaten, * Moyſeſec permettitu dic ſeparationeco letraren ſcribatzera, eta *emaztearen* vtzitera.

5 Eta ihardieſten çuela Ieſuſec erran ciecén, Çuen bihotzeco gogortaſſunagatic ſcribatu drauçue manamendu hori.

Gen.1.27. math.19.4. 6 Baina creatione hatſetic, * arra eta emea eguin cituen Iaincoac.

Gen.2.24. i.cor.6.16. ephes.5. 31. 7 * Hunegatic, vtziren ditu guiçonac bere aita eta ama, eta iunctaturen çayó bere emazteari.

8 Eta biac içanẽ dirade haraguibat. Beraz guehiagoric eztirade biga, baina haraguibat.

1.Cor.7.10 9 * Bada Iaincoac iunctatu duena guiçonac ezteçala ſepara.

10 Eta etchean berriz diſcipuluéc gauçá harçaz beraz interroga ceçaten.

Mat.5.32. eta 19.9. luc.16.18 1.cor.7.10. 11 Eta *harc* erran cieçen, * Norc-ere vtziren baitu bere emaztea, eta bercebat emazte harturen, adulterio iauquiten du haren contra.

12 Eta baldin emazteac vtzi badeça bere ſenharra,

harra, eta berce batequin ezcon badadi, adulterio iauquiten du.

13 * Orduan presenta cietzoten haourtcho *batzu*, hec hunqui litzançat: baina discipuluéc mehatchatzen cituzten, hec presentatzen cituztenac.

Mat.19.13 luc 18.15.

14 Eta hori ikus ceçanean Iesusec, fascha cedin eta erran ciecén, vtzitzaçue haourtchoac enegana ethortera, eta eztitzaçuela empatcha: ecen horlacoén da Iaincoaren resumá.

15 Eguiaz erraiten drauçuet, norc-ere ezpaitu recebituren Iaincoarẽ resumá haourtcho anço, ezta hartan sarthuren.

16 Eta hec bessoetara harturic, escuac hayén gainean eçarriric, benedica citzan.

17 Eta hura ilkiten cela bideari *lequionçat*, * norbeitec harengana laster eguinic, eta haren aitzinean belhauricaturic, interroga ceçan, Magistru oná, cer eguinen dut vicitze eternala heretа deçadançat?

Mat.19.16 luc 18.18.

18 Eta Iesusec erran cieçon, Cergatic deitzen nauc on? eztuc nehor onic bat baicen, *eta hura*, Iaincoa.

19 Manamenduac badaquizquic, * Ezteçala adultera, Ezteçala hil, Ezteçala ebats, Ezteçala testimoniage falsuric erran, Damuric eztaguioala *nehori*, Ohoraitzac eure aita eta ama:

Exo.20.13. 14

20 Eta harc ihardesten çuela erran cieçon, Magistruá, horiac guciac beguiratu citiat neure gaztetassunetic.

21 Eta Iesusec harenganat behaturic, onhets

ceçan, eta erran cieçón, Gauça baten peitu aiz, habil, dituanac ſal itzac, eta eman ietzéc paubrey: eta vkanen duc thesaurbat ceruän: eta athor, arreit niri, crutzea harturic.

22 Eta hura faſchaturic hitz hunez, ioan cedin triſteric: ecen on handiac cituen.

23 Orduan inguru behaturic Ieſuſec dioſte bere diſcipuluey, O cein nequez onhaſſundunac, Iaincoaren reſumán ſarthuren diraden!

24 Eta diſcipuluac ſpanta citecen hitz hauçaz. Baina Ieſuſec berriz ihardeſten çuela erran ciecén, Haourrác, cein gaitz den abraſtaſſunetan fida diradenac, Iaincoaren reſumán ſar ditecen.

25 Errachago da cablebat orratzaren çulhotic iragan dadin, ecen ez abratſa Iaincoaren reſumán ſar dadin.

26 Baina hec are ſpantago citecen, bere artean cioitela, Eta nor ſalua ahal daite?

27 Baina hetarat behaturic Ieſuſec dio, Guiçonac baithan impoſſible da, baina ez Iaincoa baithan: ecen gauça guciac poſſible dirade Iaincoa baithan.

*Mat. 19.27 luc 18.28.* 28 * Orduan Pierris has cedin hari erraiten, Huná, guc vtzi citiagu gauça guciac, eta iarreiqui gaitzaizquic hiri.

29 Eta ihardeſten duela Ieſuſec dio. Eguiaz diotſuet, nehor ezta vtzi duenic etchea, edo anayeac, edo arrebác, edo aita, edo ama, edo emaztea, edo haourrac, edo landác, ene eta Euangelioaren amorecatic.

30 Recebi ezteçan orain demborá hunetan e-hunetan hambát, etche eta anaye, eta arreba, eta ama, eta haour, eta landa, perſecutionequin, eta ſecula ethortecoan vicitze eternala.

31 * Baina anhitz lehen *diradenac*, içanen dirade azquen: eta azquenac lehen.

Mat. 19.30 luc 13.30.

32 *Eta ciraden bidean igaitẽ ciradela Ieruſalemera: eta hayén aitzinean ioiten cen Ieſus, eta ſpantatzen ciraden, eta çarreitzola ciraden beldur. Eta harturic berriz hamabiac, has cequien ethorri behar çaizcan gaucén erraiten:

Mat. 20.17 luc 18.31.

33 *Cioela*, huná, igaiten gara Ieruſalemera: eta guiçonaren Semea liuraturen da Sacrificadore principalén eta Scribén eſcuetara, eta hiltzera condemnaturen duté, eta Gentilén eſcuetaraco duté:

34 Eta *hec* eſcarniaturẽ dute hura, eta açotaturen, eta thu eguinen draucate, eta hilẽ duté: baina hereneco egunean reſuſcitaturen da.

35 * Orduan ethorten dirade harengana Iacques eta Ioannes Zebedeoren ſemeac, dioitela, Magiſtruá, nahi guendiquec cer-ere eſcaturen baicara, eguin ieçagun.

Matth. 20. 20

36 Eta harc erran ciecén, Cer nahi duçue daguiçuedan?

37 Eta hec erran cieçoten, Eman ieçaguc, bata hire eſcuinean, eta bercea hire ezquerrean iar gaitecen hire glorián.

38 Eta Ieſuſec erran ciecén, Eztaquiçue ceren eſquez çaudeten: edan ahal diroçue nic edaten dudan copá, eta ni batheyatzen naicen baptiſ-

moaz batheya ahal çaitezquete?

39 Eta hec erran cieçoten, Bay. Eta Iesusec erran ciecén, Nic edaten dudan copá edanen baduçue, eta ni batheyatzen naicen baptismoaz batheyaturen baçarete:

40 Baina ene escuinean edo ene ezquerreã iartea, ezta ene emaiteco, baina *emanen çaye* preparatu içan çayeney.

41 Eta *hori* ençunic hamarrac has citecen faschatzen Iacquesez eta Ioannesez.

42 Baina Iesusec hec beregana deithuric dioste *Badaquiçue ecen nationén gainean seignoriatzea laket çayenéc, hayén gainean seignoriatzẽ dutela, eta hayén artean handi diradenéc authoritatez vsatzen dutela hayen gainean.

Luc 22.25

43 Baina ezta hala içanen çuen artean: aitzitic nor-ere nahi içanen baita handiena içan çuẽ artean, içanen da çuen cerbitzari.

44 Eta nor-ere nahi içanen baita çuen artean içan ehen, içanen da gucién cerbitzari.

45 Ecen guiçonaren Semea-ere ezta ethorri cerbitzatu içatera, baina cerbitzatzera, eta bere viciaren anhitzengatic rançoinetan emaitera.

46 Orduan ethorten dirade Iericora: *eta hura Iericotic ilkiten cela, eta haren discipuluac eta gendetze handia, Bartimeo Timeoren seme itsua cegoen iarriric, bide bazterrean, esquez:

Matth. 20. 29. luc 18.35.

47 Eta ençunic ecen Iesus Nazareno cela, has cedin oihu eguiten eta erraiten, Iesus Dauid-en semeá, auc pietate niçaz.

48 Eta mehatchatzen çuten anhitzec ichil le-

din: baina harc vnguiz oihu guehiago eguiten çuen, Dauid-en ſemeá, auc pietate niçaz.

49 Orduan Ieſuſec guelditu ric, mana ceçan, dei ledin. Eta dei ceçaten itſua, ciotſatela, Sporça adi, iaiqui adi: deitzen au.

50 Eta hura, bere mantoa egotzi çuenean, iaiquiric ethor cedin Ieſuſgana.

51 Eta ihardeſten çuela erran cieçón Ieſuſec, Cer nahi duc daguiadan? Eta itſuac diotſa, Magiſtruá, ikuſtea recebi deçadan.

52 Eta Ieſuſec erran cieçón, Oha, eure fedeac ſaluatu au. Eta bertan recebi ceçan ikuſtea, eta iairreiquiten çayón Ieſuſi bidean.

## CAP. XI.

*1, 15 Chriſtec bere ſartzea Ieruſalemen eguiten. 13 Ficotzea eyhartzen. 15 Marchantac templetic iraiztzen. 17 Etche orationetacoa. 22 Iaincoaren fedea, 24 neceſſario orationean: 25 Othoitz eguiteracoan barkatzeco. 28 Phariſeuéc Chriſt tentatzen. 30 Ioanneſen baptiſmoa.*

1 * ETa Ieruſalemera, Bethphage eta Bethania Oliuatzetaco mēdi aldecoetara hurbiltzen ciradenean, igor citzan bere diſcipuluetaric biga,

*Mat. 21. 1 luc 19. 29.*

2 Eta erran ciecén, Çoazte çuen aurkán den burgura: eta hartan ſarthuren çareten beçain ſarri, eridenen duçue aſto vmebat eſtecatua, nehor oraino gainean iarri içan etzayonic: lachaturic hura ekardaçue.

3 Eta baldin nehorc badarraçue, Cergatic hori eguiten duçue? erraçue ecen Iaunac duela haren beharra: eta bertan hura igorriren du huna.

4 Parti citecen bada, eta eriden ceçaten asto-vmea estecaturic, bortha aldean campotic bi bideren artean: eta lacha ceçaten hura.

5 Eta han ceudenetaric batzuc erran ciecén, Cer ari çarete, lachatzen baituçue asto-vmea?

6 Eta hec erran ciecén, Iesusec manatu cituen beçala: eta ioaitera vtzi citzaten.

*Ioan.12.14* 7 * Eta ekar ceçaten asto-vmea Iesusgana, eta eçar cietzoten berén abillamenduac gainean, eta iar cedin haren gainean.

8 Eta anhitzec berén abillamenduac heda citzaten bidean: eta bercéc adarrac ebaquiten cituzten arboretaric eta bidean hedatzen.

9 Eta aitzinean cioacenéc, eta iarreiquiten ciradenéc, oihu eguiten çutē, cioitela, Hosanna, benedicatu dela Iaunaren icenean ethorten dena.

10 Benedicatu *dela* gure aita Dauid-en resuma Iaunaren icenean ethorten dena: Hosanna leku gorenetan *aicená*.

*Mat.21.10* *luc 19.45* 11 * Eta sar cedin Ierusalemen Iesus, eta templean: eta gauça gucietara inguru behaturic, eta ia berandua cela ilki cedin Bethaniarát hamabiequin.

*Mat.21.19* 12 * Eta biharamunean ilki içan ciradenean Bethaniatic, gosse cedin.

13 Eta vrrundanic ikussiric ficotze hostodunbat, ethor cedin eya deus hartā eriden ceçaque-

nez: eta hartara ethorriric, etzeçan deus eriden hoſtoric baicen: ecen etzén fico dembora.

14 Orduan ihardeſten çuela Ieſuſec erran cieçón ficotzeari, Hemendic harát hireganic ſecu lan fructuric nehorc ian ezteçala. Eta *haur* ençun ceçaten haren diſcipuluéc.

15 Eta ethorten dirade Ieruſalemera: eta Ieſus templean ſarthuric, has cedin ſaltzen eta ero ſten ari ciradenén campora egoizten, eta cambiadoren mahainac, eta yſſo columba ſaltzalen cadirác itzul citzan.

16 Eta etzuen permettitzen nehorc vnciric erabil leçan templetic.

17 Eta iracaſten ari cen, cioſtéla. Ezta ſcribatua, ecen * Ene etchea orationetaco etche deithuren dela natione gucietan? * baina çuec hura gaichtaguin lece eguin duçue. *Eſa.56.7* *Hier.7.11*

18 Eta *haur* ençun ceçaten Scribéc eta Sacrificadore principaléc, eta bilha çabiltzan nolatan hura hil leçaqueten: ecen beldur çaizcan, ceren populu gucia miraculuz baitzegoen haren doctrináz.

19 Eta arratſa ethorri cenean, ilki cedin *Jeſus* hiritic.

20 * Eta goicean aldetic iragaiten ciradela ikus ceçaten ficotzea erroetarano eyhartua. *Mat.21.19*

21 Orduan orhoituric Pierriſec erran cieçón, Magiſtruá, huná, *hic* maradicatu duán ficotzea eyhartu duc.

22 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran cieçón, Auçue Iaincoaren fedea.

23 Eguiaz erraiten drauçuet, norc-eré erranen baitrauca mendi huni, Ken adi, eta iraitz adi itsassora: eta ezpaitu dudaric eguinen bere bihotzean, baina sinhetsiren baitu ecen erraiten duena eguinen dela, cer-ere erranen baituque eguinen çayó.

*Mat.7.7. luc 11.9.* 24 *Halacotz erraitẽ drauçuet, cerẽ-ere othoitz eguiten duçuela escaturen baitzarete, sinhetsaçue ecen recebiturẽ duçuela: eta eguinẽ çaiçue.

*Mat.6.14.* 25 *Baina othoitz eguiten iar çaitezteneã, barka eçaçue baldin deus baduçue nehoren cõtra; çuen Aita ceruëtacoac-ere, çuey barka dietzaçuen çuen faltác.

26 Ecen baldin çuec barka ezpadeçaçue: çuen Aita ceruëtan denac-ere eztrauzquiçue barkaturen çuen faltác.

*Matth.21.23. luc 20.1* 27* Orduan ethortẽ dirade berriz Ierusalemera: eta tẽplean çabilala, ethor citecẽ harẽgana Sacrificadore prĩcipalac, eta scribác, eta Ancianoac

28 Eta erran cieçoten, Cer authoritatez gauça horiac eguiten dituc? eta norc emã drauc authoritate hori gauça horiac eguin ditzán?

29 Eta Iesusec ihardesten çuela errã ciecén, Interrogaturen çaituztet nic-ere çuec gauça batez: eta ihardestaçue, eta erranen drauçuet cer authoritatez gauça hauc eguiten ditudan.

30 Ioannesen baptismoa cerutic cen, ala guiçonetaric? ihardestaçue.

31 Eta baciharducaten elkarren artean, cio itela, Baldin erran badeçagu, Cerutic: erranen du Cergatic beraz eztuçue sinhetsi hura?

32 Baina baldin erran badeçagu, Guiçonetaric populuaren beldur gara: ecen guciéc çaducaten Ioannes eguiazco Propheta içan cela.

33 Eta ihardesten çutela erran cieçoten Iesusi, Etzeaquiagu. Eta Iesusec ihardesten duela dioste, Nic-ere eztrauçuet erranen cer authoritatez gauça hauc eguiten ditudan.

## CAP. XII.

*1 Mahastia laborariey alocatu. 10 Harria edificaçaléz arbuyatu. 14 Tributa pagatzeco denez. 20 Çazpi anayeren emazte içanaz. 25 Resurrectioneaz. 28 Manamendu principalaz. 33 Iaincoaganatco eta hurcoaganatco amorioaz. 35 Christ Dauid-en seme. 38 Scribetaric eta Phariseuetaric beguiratzeco. 42 Truncora emaiten çuen alargunaz.*

1* GVero has cequién comparationez erraiten, Mahastibat landa ceçan guiçon-batec, eta gingura ceçan hessiz, eta eguin ceçan hobibat lacotaco, eta edifica ceçan dorrebat, eta aloca ciecén laborariey, eta camporat ioan cedin.

*Esa.5.1. iere.2.21. mat.21.33 luc 29.9.*

2 Eta igor ceçan laborarietara sasoinean cerbitzaria, laborarietaric recebi leçançát mahastico fructutic.

3 Baina hec hura harturic çaurt ceçaten, eta igor ceçaten hutsic.

4 Eta berriz igor ceçan hetara berce cerbitzaribat eta harri vkaldiz hauts cieçoten buruä, eta igor ceçaten desonestqui tractaturic.

5 Eta berriz bercebat igor ciecén, eta hura hil

ceçaten:eta anhitz berceric, batzu cehatzen eta berceac hiltzen cituztela.

6 Oraino bada bere ſeme maitebat vkan eta, hura-ere igorri vkan du hetara azquenic,cioela, Ahalque içanen dirade ene ſemearen.

7 Baina laborari hec erran ceçaten bere artean, Haur da primua: çatozte hil deçagun haur,eta gure içanen da heretagea.

8 Eta harturic hura hil ceçaten,eta iraitz ceçaten mahaſtitic campora.

9 Cer eguinen du bada mahaſti iabeac?Ethorriren da, eta deſeguinẽ ditu laborariac, eta emanen du mahaſtia berceri.

10 Eta Scriptura haur-ere eztuçue iracurri? * Edificaçalléc arbuyatu duten harria, cantoin buru eguin içan da:

*Pſal.118.22. eſa.28.16. mat.21.42 act.4.11. rom.9.33. 1.pier.2.7.*

11 Iaunaz eguin içan da haur, eta da gauça miragarria gure beguién aitzinean?

12 Ayher ciraden bada haren hatzamaitera, baina populuaren beldur ciraden: ecen eçagutu çuten hayén contra comparatione haur erran çuela:eta hura vtziric ioan citecen.

13 *Guero igor citzaten harengana Phariſeuetaric eta Herodianoetaric batzu, hura hatzaman leçatençát hitzean.

*Matth.22.16. luc 20.20.*

14 Eta hec ethorriric diotſate, Magiſtruá, bacequiagu ecen eguiati aicela,eta nehoren anſiaric eztuála: ecen ezago guiçonén apparentiara beha, baina eguiazqui Iaincoaren bidea iracaſten duc: Bidezco da tributarẽ Ceſari emaitea, ala ez?emanen dugu,ala eztugu emanen?

15 Eta harc, eçaguturic hayén hypocrisiá, erran ciecén, Cergatic tentatzen nauçue? ekardaçue dinerobat, ikus deçadançat.

16 Eta hec presenta cieçoten: orduan dioste, Norena da imagina haur eta scribua? Eta hec erran cieçoten, Cesarena.

17 Eta ihardestē çuela Iesusec errā ciecén, *Rēda ietzoçue Cesarenac Cesari: eta Iaincoarenac Iaincoari. Eta mirets ceçaten haren gainean. *Rom.13.7.*

18 *Orduan ethor citecen harengana Sadduceuác, ceinéc erraiten baitute eztela resurrectioneric, eta interroga ceçaten, cioitela, *Matth.22 23. luc 20. 27.*

19 Magistruá, Moysesec scribatu vkā diraucuc, baldin cembeiten anayea hil bada, eta vtzi badu emaztea, eta haourric vtzi ezpadu, har deçan haren anayac haren emaztea, eta eguin dieçón leinu bere anayeri. *Deut.25.5*

20 Cituán bada çazpi anaye: eta lehenác har ciecán emazte, eta hiltzean etzieçán leinuric vtzi.

21 Eta bigarrenac har cieçán hura, eta hil ciedián, eta harc-ere etzieçán leinuric vtzi: eta hirurgarrenac halaber.

22 Eta har cieçateán hura çazpiéc, eta leinuric etzieçateán vtzi: gucietaco azquenenic hil ciedián emaztea-ere.

23 Resurrectionean bada, resuscitatu diratenean hetaric ceinen emazte içanen da? Ecen çazpiéc hura emazte vkan dié.

24 Orduan ihardestē çuela Iesusec errā ciecén, Eztuçue halacotz huts eguitē cerē ezpaitaquizquiçue Scripturác, ezeta Iaincoarén verthutea?

25 Ecen hiletaric resuscitatu diratenean, eztu nehorc emazteric harturen, ez emanen ezconçaz: baina içanen dirade ceruëtaco Aingueruäc beçala.

26 Eta hiléz den becembatean, ecen resuscitatzen diradela, eztuçue iracurri Moysesen liburuan, nola berroan hari minçatu içan çayón Iaincoa, cioela,* Ni *naiz* Abrahamen Iaincoa, eta Isaac-en Iaincoa, eta Iacob-en Iaincoa?

*Matth.22.32. luc 20.37. act.7.31.*

27 Ezta hilén Iaincoa, baina vicién Iaincoa: çuec beraz haguitz enganatzen çarete.

*Matth.22.34.*

28 *Eta ethor cedin Scribetaric cembeit, hec disputatzen ençunic, eta ikussiric ecen vngui ihardetsi cerauela, *harc* interroga ceçan, Cein da manamendu gucietaco lehena?

29 Eta Iesusec ihardets cieçón. Manamendu gucietaco lehena *duc*,*Behadi Israel, gure Iainco Iauna, Iaun bakoitzbat duc.

*Deut.6.4.*

30 Onhetsiren duc bada eure Iainco Iauna, eure bihotz guciaz, eta eure arima guciaz, eta eure pensamendu guciaz, eta eure ahal guciaz: haur *duc* lehen manamendua.

31 Eta bigarrenac hura irudi *dic*,* Onhetsiren duc eure hurcoa eure buruä beçala: hauc baino berce manamendu handiagoric eztuc.

*Leui.19.18 mat.22.39 rom.13.9. gala.5.14. iac.2.8.*

32 Orduan erran cieçón Scriba harc, Vngui, Magistruá, eguiazqui erran duc, ecen Iaincobat dela eta harçaz berceric eztela:

33 Eta haren onhestea bihotz guciaz, eta adimendu guciaz, eta arima guciaz, eta indar guciaz: eta hurcoaren onhestea bere buruä beçala,

guehiago dela ecen ez holocausta eta sacrificio guciac.

34 Eta Iesusec ikussi çuenean ecen harc çuhurqui ihardetsi çuela, erran cieçón, Ezaiz vrrun Iaincoaren resumatic. Eta nehor guehiagoric etzayón ausart interrogatzera.

35 *Eta ihardesten çuela Iesusec erraiten çuen, templean iracasten ari cela, Nola dioite Scribéc ecen Christ Dauid-en seme dela?

*Matth.22.41. luc 20.41.*

36 Ecen Dauid-ec berac erran du Spiritu sainduaren inspirationez, *Erran drauca Iaunac ene Iaunari, Iar-adi ene escuinean, eçar ditzaquedano hire etsayac hire oinén scabella.

*Psal.110.1*

37 Beraz Dauid-ec berac deitzen du hura Iaun: nondic da beraz haren seme? Eta gendetze anhitzec ençuten çuen hura gogotic.

38 *Eta erraiten cerauen bere doctrinán, Beguirauçue Scriba arropa lucequin ebili nahi diradenetaric, eta salutationey merkatuetan *ondariztenetaric*,

*Matt.23.6 luc 11.43. eta 20.45.*

39 Eta lehen cadirey synagoguetan, eta lehen placey banquetetan:

40 *Iresten dituztela *ema* alhargunén etcheac, are luçaqui othoitz eguin irudiz: hauc recebituren duté condemnatione handiagoa.

*Mat.23.14 luc 20.47.*

41 *Eta Iesusec truncoaren aurkán iarriric cegoela, gogoatzen çuen nola populuac diru emaiten çuen truncora, eta anhitz abratsec emaiten çutén anhitz.

*Luc 21.1.*

42 Eta ethorriric *emazte* alhargun paubre batec eman citzan bi peça chipi, baitziraden quadrantbat.

43 Orduan bere diſcipuluac beregana deithuric erran ciecén, Eguiaz diotſuet, ecen alhargun paubre hunec guehiago eman duela ecen ez truncora eman duten guciéc.

44 Ecen guciéc ſoberaturic çutenetic eman vkan duté, baina hunec eman du bere paubreciatic çuen gucia *bayeta*, bere ſuſtantia gucia.

CAP. XIII.

*2, 14 Ieruſalemeren deſtructionea. 6 Chriſten aduenimenduco ſignoac. 9 Perſecutioneac. 10 Natione gucietan Euangelioa predicatzeco. 11 Spiritu ſaindua minçaturen. 22 Miraculu falſuac. 26 Chriſten iudicioratco ethortea. 31 Hitzaren fermetatea. 33 Veillatzeco eta othoitz eguiteco.*

*Mat.24.1. luc 21.5.* 1 ETa *ilkiten cela templetic, erran cieçón bere diſcipulu etaric batec, Magiſtruá, ikuſquic cer harriac eta cer edificioac *diraden hauc*.

2 Orduan Ieſuſec ihardeſten çuela erran cieçón, Badacuſquic edificio handi hauc? *eztuc guelditurem harria harriaren gainean deſeguin eztadin. *Luc 19.44.*

3 Eta iarriric cegoela Oliuatzetaco mendian templearen aurkán, interroga ceçaten appart Pierriſec eta Iacqueſec, Ioanneſec eta Andriuec,

4 *Cioitela*, Erraguc noiz gauça horiac içanen diraden, eta cer ſigno *içanen den* gauça horiac guciac compliturem diradenean.

5 Eta Ieſus, ihardeſten cerauela, has cedin erraiten, *Beguirauçue nehorc ſeduci etzaitzaten: *Eph.5.6. 2.theſ.2.3.*

6 Ecen anhitz ethorriren dirade ene icenean, dioitela, Ni naiz *Christ*: eta anhitz ſeduciituren duté.

7 Baina dançuzquiçuenean guerlác eta guerla famác, etzaiteztela trubla: ecē *gauça hauc* eguin behar dirade: baina ezta oraino *içanen* fina.

8 Ecen altchaturē da nationea nationearē contra, eta reſumá reſumaren contra: eta içanen dirade lur ikaratzeac lekutic lekura, eta goſſeteac eta nahaſtecamenduac: dolorén hatſeac, hauc.

9 Baina beguira eieçue çuec ceuron buruëy: ecen liuraturen çaituzte conſiſtorioetara eta ſynagoguetara: açotaturen çarete, eta gobernadorén eta reguén aitzinera eramanen çarete ene cauſaz, hæy teſtimoniagetan.

10 Eta natione gucietan behar da lehenic predicatu Euangelioa.

11 * Eta hatzamanic eramanen çaituztenean etzaretela aitzinetic anſiatā cer erranen duçuen, eta ezalbeitzineçate medita: baina cer-ere emanen baitzaiçue ordu hartan, hura albeitzinarrate: ecen etzarete çuec minço çaretenac, baina Spiritu ſaindua.

*Mat. 10. 19 luc 12. 11.*

12 Orduan liuraturen du anayeac anayea heriotara, eta aitác haourra: eta altchaturen dirade haourrac aita-amén contra, eta hil eraciren dituzté.

13 Eta gaitzetſiac içanen çarete guciéz, ene icenagatic: baina norc-ere perſeueraturen baitu finerano, hura ſaluaturen da.

14 * Dacuſſaçuenean bada deſolationearen

*Matth. 24. 15.*

*Dan.9.27.* abominationea, *Daniel Prophetáz erran içan dena, behar eztén lekuan dagoela (iracurtzen duenac adi beça) *orduan Iudeã diratenéc, ihes albeileguite mendietarát: *Luc 21.21*

15 Eta etche gainean datena, ezalbeiledi iauts etcherát, eta ezalbeiledi ſar deuſen bere etchetic eramaitera.

16 Eta landán datena ezálbeiledi guibelerat itzul, bere abillamenduaren hartzera.

17 Baina dohaingaitz *emazte* içorrén eta eredoſquiten duqueitenén egun hetan.

18 Othoitz eguiçue bada çuen ihes eguitea eztén neguän.

19 Ecen içanen dirade egun hec *halaco* tribulatione, nolacoric ezpaita içan Iaincoac creatu dituen gaucén creatze hatſetic oraindrano, eta ezpaita içanen.

20 Eta baldin Iaunac laburtu ezpalitu egũ hec, nehor ezlaite ſalua: baina elegitu dituen elegituacgatic, laburtu ditu egun hec.

*Matt.24.23.* *luc 17.23.* 21 *Eta orduã baldin nehorc badarraçue, Huná hemen Chriſt, edo, Hará han: ezalbeitzineçate ſinhets.

22 Ecen altchaturen dirade Chriſt falſuac, eta propheta falſuac: eta eguinen dituzte ſignoac eta miraculuac ſeducitzeco, baldin poſſible baliz, elegituen-ere.

23 Baina çuec beguirauçue. Huná, aitzinetic erran drauzquiçuet gauça guciac.

*Eſa.13.10.* *ezech.32.7* *ioel 2.10.31, eta 3.15.* 24 *Halaber egun hetan tribulatione haren ondoan, iguzquia ilhunduren da: eta ilharguiac

eztu

eztu bere arguia emanen.

25 Eta ceruco içarrac eroriren dirade, eta ceruëtan *diraden* verthuteac ikaraturen dirade.

26 Eta orduan ikussiren duté guiçonaren Semea datorquela hodeyetan bothere eta gloria handirequin.

27 *Eta orduan igorriré ditu bere Ainguerüäc, eta bilduren ditu bere elegituac laur haicetaric, lur bazterretic ceru bazterrerano.

*Matth.24. 31.*

28 Bada ficotzetic ikas eçaçue comparationea. Haren adarra ia vstertzen eta hostatzen denean, badaquiçue ecen vdá hurbil dela.

29 Hala çuec-ere ikus deçaçuenean gauça hauc eguiten diradela, iaquiçue ecen hurbil datela borthán.

30 Eguiaz erraiten drauçuet, ecen eztela iraganen mende haur, gauça hauc guciac eguin diteno.

31 Ceruä eta lurra iraganen dirade, baina ene hitzac eztirade iraganen.

32 Baina egun harçaz eta orenaz nehorc eztaqui, ez eta ceruän diraden Ainguerüëc-ere, ez eta Semeac-ere, Aitac *berac* baicen.

33 *Beguirauçue, veilla eçaçue eta othoitz eguiçue, ecen eztaquiçue demborá noiz daten.

*Matth.24. 42.*

34 *Hala da* nola camporat ioan licén guiçon batec, bere etchea vtziriç, eta emanic bere cerbitzariey authoritate: eta ceini bere lana, borthal-çainari veilla leçan manatu balerauca.

35 Veilla eçaçue beraz: ecen eztaquiçue noiz etzcheco iauna ethorriren den, arratsean, ala

gauherditan, ala oillaritean, ala goicean:

36 Vstegaberic dathorrenean, lo çaunçatela eriden etzaitzaten.

37 Eta çuey erraiten drauçuedana, guciey erraiten drauet, Veilla eçaçue.

## CAP. XIIII.

*1 Conseillu Christen contra. 12 Bazcoa. 10, 18 Iudasec Christ traditzen. 22 Cenaren institutionea. 30 Pierrisi aitzinetic erraiten nola vkaturen çuen. 32 Christ baratzean. 34 Triste Christ. 38 Veillatzeco eta othoitz eguiteco. 44 Iudasen pot eguitea. 50 Apostoluéc ihes eguiten. 53 Caiphasgana Christ eraman içan. 61 Ichilic egoiten. 62 Hura dela Christ berac aithortzen. 65 Christ thustatzen eta buffetatzen.*

*Mat.26.1. luc 22.1.*

1 * CEn bada Bazcoaren eta ogui altchagarri gabecoen *bestá* bi egunen buruän: eta Sacrificadore principalac eta Scribác çabiltzan bilha nolatan hura fineciaz hatzamanic hil leçaqueten.

2 Eta cioiten, Ez bestán, populuan tumultoric eztençát.

*Matt.26.6 ioan 12.2.*

3 *Eta *Iesus* Bethanian Simon sorhayoaren etchean cela eta mahainean iarriric cegoela, ethor cedin emaztebat aspic garbizco vnguentu precio handitaco boeitabat çuela: eta hautsiric boeitá, huts ceçan haren buru gainera.

4 Eta ciraden batzu berac baithan gaitzi çayenic, eta erraiten çutenic, Certaco vnguẽtu goastatze haur eguin içan da?

5 Ecen haur hirur-ehun dinero baino guehiagotan ſaldu ahal çaten, eta eman paubrey. Eta baçadaſſaten haren contra.

6 Baina Ieſuſec dio, Vtzaçue hori, cergatic faſchatzen duçue? obra ombat enegana eguin du.

7 Ecen paubreac bethiere vkanen dituçue çuequin, eta noiz-ere nahi vkanen baituçue, hæy vngui ahal daidieçue: baina ni eznauçue bethi vkanen.

8 Hunec ahal duena eguin du: auançatu da ene gorputzaren vnctatzera ene ohorztecotzat.

9 Eguiaz erraiten drauçuet, non-ere predicaturen baita Euangelio haur mundu gucian, hunec eguin duena-ere contaturen da hunen memoriotan.

10 *Orduan Iudas Iſcariot hamabietaric bat ethor cedin Sacrificadore principaletara, hura liura liecençat. *Matth.26.14. luc 22.4.*

11 Eta hec *hori* ençunic aleguera citecen, eta prometta cieçoten diru emaitera: eta bilha çabilan nolatán hura dembora moldezcoz tradi leçaqueen.

12 *Eta altchagarri gabeco *oguién* lehen egunean, Bazcoa ſacrificatu behar çutenean, erran cieçoten bere diſcipuluéc, Non nahi duc ioanic appain deçagun ian deçánçat Bazcoa? *Matth.26.17. luc 22.7.*

13 Orduan igor citzan bere diſcipuluetaric biga, eta erran ciecén, Çoazte hirira, non bathuren baitzaiçue guiçombat, pegar-bat vr daramala: çarreitzate hari.

14 Eta nora-ere ſarthuren baita, erroçue aita-familiari: Magiſtruac cioc, Non da neure diſcipuluequin Bazcoa ianen dudan oſtatua?

15 Eta harc eracutſiren drauçue gambera handibat paratua *eta* appaindua: han appain ieçaguçue.

16 Parti citecen bada haren diſcipuluac, eta ethor citecen hirira: eta eriden ceçaten erran cerauen beçala, eta appain ceçaten Bazcoa.

17 Eta arraſtu cenean, ethor cedin hamabiequin.

*Matth.26.20. luc 22.14. ioan 13.21.*

18 *Eta hec mahaineã iarriric ceudela, eta alha ciradela, dio Ieſuſec, Eguiaz erraiten drauçuet, çuetaric batec tradituren nau, ceinec iaten baitu enequin.

19 Eta hec has citecen triſtetzen: eta hari erraiten bata bercearen ondoan, Ni naiz? eta berceac, Ni naiz?

20 Eta harc ihardeſten çuela erran ciecén, Hamabietaric batec, enequin platean trempatzen duenec *tradituren nau.*

21 Segur guiçonaren Semea badoa, harçaz ſcribatu den beçala: baina malediĉtione guiçon haren gainean, ceinez guiçonaren Semea traditurẽ baita: on çuqueen guiçon harc baldin iayo ezpaliz.

22 Eta hec alha ciradela, har ceçan Ieſuſec oguia *eta* gratiác rendaturic hauts ceçan: eta emã ciecén, eta dio, Har eçaçue, ian eçaçue: haur da ene gorputza.

23 Eta copá hartu çuenean, gratiác rendaturic, eman ciecén: eta edan ceçaten hartaric guciéc.

24 Eta dioſte, Haur da ene odol Teſtamentu berricoa, anhitzengatic iſſurten dena.

25 Eguiaz diotſuet, ecen eztudala edanen hemendic harat aihenaren fructutic, hura berriric Iaincoaren reſumán edanen dudan egunerano.

26 Eta canticoa erranic ioan citecen Oliuatzetaco mendirát.

27 *Orduan dioſte Ieſuſec, Guciac ſcandalizaturen çarete nitan gau hunetan: ecen ſcribatua da, *Ioren dut artzaina, eta barreyaturen dirade ardiac. *Ioan 16.32* *Zach.13.7*

28 *Baina reſuſcita nadinean aitzinduren natzaiçue Galileara. *Berr. 16.7*

29 Eta Pierriſec erran cieçón, Baldin guciac ſcandaliza baditez-ere, ni ez ordea.

30 *Orduan diotſa Ieſuſec, Eguiaz erraiten drauat ecen egun, gau hunetan biguetan oillarrac io deçan baino lehen, hiruretan vkaturen nauála. *Luc 22.34. ioan 13.38*

31 Baina harc vnguiz haguitzago erraitẽ çuen, Baldin hirequin hil behar banu-ere, ezaut vkaturen. Eta halaber guciec-ere erraiten çutén.

32 *Guero ethorten dirade Gethſemane deitzen den leku batetara: eta dioſte bere diſcipuluey, Iar çaitezte hemen, othoitz daididano. *Matth.26.36. luc 22.39.*

33 Eta hartzen ditu Pierris eta Iacques eta Ioannes berequin, eta has cedin icitzen, eta guciz keichatzen.

34 Eta dioſte, Alde gucietaric triſte da ene ari-

má heriorano: çaudete hemen, eta veilla eçaçue.

35 Eta aitzinachiago ioanic, bere buruä lurrera egotz ceçan, eta othoitz eguin ceçan, baldin poßible baliz iragan ledin harenganic oren hura:

36 Eta erran ceçan, Abba, Aitá, gauça guçiac poßible dituc hire: transporta eçac eneganic copa haur: badaric-ere ez nic nahi dudana, baina hic nahi duana.

37 Guero ethor cedin, eta eriden citzan lo ceunçala: eta diotsa Pierrisi, Simón lo atza? orembat ecin veillatu duc?

38 Veilla eçaçue, eta othoitz eguiçue, sar etzaitezten tentationetan: spiritua prompto *da*, baina haraguia flacu.

39 Eta berriz ioanic othoitz eguin ceçan, eta propos bera erran ceçan.

40 Guero itzuliric eriden citzā berriz lo ceunçala: ecen hayén beguiac cargatuac ciraden, eta etzaquiten cer ihardets ceçaqueoten.

41 Eta ethor cedin herén aldian, eta dioste, Lo eguiçue gaurguero, eta reposa çaitezte: asco da, ethorri da orena: huná, liuratzen da guiçonaren Semea gaichtoén escuetara.

42 Iaiqui çaitezte, goacen: huná, ni traditzen nauena hurbildu da.

*Matth.26.47. luc 22.47. ioan 18.3.*

43 *Eta bertan, hura oraino minço cela, ethor cedin Iudas, baitzén hamabietaric bat, eta harequin gendetze handia ezpatequin eta vhequin, Sacrificadore principalén, eta Scribén, eta An-

cianoén partez.

44 Eta eman cerauen, hura traditzen çuenac elkarren artean ſeignale,cioela, Nori-ere pot eguinen baitraucat,hura da,hari çatchetzate, eta eramaçue ſegurqui.

45 Eta ethorri cenean, bertan harengana hurbilduric diotſá,Magiſtruá,Magiſtruá, eta pot eguin cieçón.

46 Orduan hec eçar citzaten bere eſcuac haren gainean,eta hatzaman ceçaten.

47 Eta han ciradenetaric cembeitec, ezpatá idoquiric io ceçan Sacrificadore principalaren cerbitzaria,eta edequi cieçón beharria.

48 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén, Gaichtaguin baten ondoan beçala ilki çarete ezpatequin eta vhequin ene hatzamaitera?

49 Egun oroz çuen artean nincén templean iracaſten ari nincela, eta ez nauçue hartu. Baina *behar da* compli ditecen Scripturác.

50 Orduan hura vtziric *haren diſcipulu* guciéc ihes ceguitén.

51 Eta guiçón gaztebat iarreiqui içan çayón *gorputz* billuciaren gainean inguru mihiſſe batez eſtaliric,eta hatzaman ceçaten hura guiçon gazte batzuc.

52 Baina hura, vtziric mihiſſea, billuzgorriric itzur cequién.

53 * Orduan eraman ceçaten Ieſus Sacrificadore ſubiranoagana: eta bil citecen harequin Sacrificadore principal guciac, eta Ancianoac, eta Scribác.

*Matth.26.57. luc 22 54. ioan 18.13.*

54 Eta Pierris vrrundanic iarreiqui cequión Sacrificadore ſubiranoaren ſala barnerano: eta cegoen iarriric cerbitzariequin, berotzen cela ſu bazterrean.

*Matt.26. 59.* 55 *Eta Sacrificadore principalac, eta conſiſtorio gucia Ieſuſen contra teſtimoniage bilha çabiltzan, hura hil eraci leçatençát: eta etzutén erideiten.

56 Ecen anhitzec falſuqui teſtificatzen çutén haren contra: baina etziraden conforme hayén teſtimoniageac.

57 Orduan batzuc iaiquiric falſuqui teſtifica ceçaten haren contra, cioitela,

*Ioan 2.19.* 58 Guc ençun dugu hori erraiten, *Nic deſeguinẽ dut tẽple eſcuz eguin haur, eta hirur egunez berce eſcuz eguin eztẽbat edificaturen dut.

59 Baina hala-ere hayén teſtimoniagea etzén conforme.

60 Orduan Sacrificadore ſubiranoac artera iaiquiric interroga ceçan Ieſus, cioela, Eztuc deus ihardeſten? cer *da* hauc hire contra teſtificatzen dutena?

61 Baina hura ichilic cegoen, eta etzeçan deus ihardets. Berriz Sacrificadore ſubiranoac interroga ceçan hura, eta erran cieçón, Hi aiz Chriſt *Iainco* Benedicatuaren Semea?

*Matth.24. 30.* 62 Eta Ieſuſec errã cieçón, Ni nauc, *eta ikuſſiren duçue guiçonaren Semea iarriric dagoela *Iaincoaren* botherearen eſcunean, eta ethorten dela ceruco hodeyetan.

63 Orduan Sacrificadore ſubiranoac bere arro

pác erdiraturic erran ceçan, Cer guehiago testimonio behar dugu?
64 Ençun duçue blaſphemioa: cer irudi çaiçue? Eta hec guciéc haren contra iugea ceçatē, hil mereci çuela.
65 Eta has citecen batzu haren contra thu eguiten: eta haren beguithartearen eſtaltzen, eta haren buffetatzen: eta hari erraiten, Prophetiza eçac. Eta officieréc cihor vkaldi emaiten ceraucaten.
66 * Eta Pierris behereco ſalán cegoela, ethor cedin Sacrificadore ſubiranoaren neſcatoetaric bat:

Mat. 26. 69 luc 22. 55. ioan. 18. 28

67 Eta ikuſſi çuenean Pierris berotzen cegoela, hari beguira iarriric erran ceçan, Eta hi Ieſus Nazarenorequin incén.
68 Baina harc vka ceçan, cioela, Eztinát eçagutzen, ez etzeaquinat hic cer dionán. Eta ilki cedin corralerat, eta oillarrac io ceçan.
69 * Eta neſcatoa berriz hura ikuſſiric, has cedin han ciradeney erraiten, Haur hetaric da.

Mat. 26. 71 luc 22. 58. ioan. 18. 25

70 Baina harc berriz vka ceçan. Eta appurbaten buruän berriz han ciradenéc erran cieçoten Pierriſi, Eguiazqui hetaric aiz, ecen Galileano aiz, eta hire lengoageac irudi dic.
71 Orduan hura has cedin maradicatzen eta arnegatzen, cioela, Eztut eçagutzen *çuec* dioçuen guiçon hori.
72 * Eta berriz oillarrac io ceçan: eta orhoit cedin Pierris Ieſuſec erran ceraucan hitzaz, Oillarrac biguetan io deçan baino lehen, hiruretan

Mat. 26. 75 ioan. 18. 27

vkaturen nauc. Eta camporat ilkiric nigar eguin ceçan.

## CAP. XV.

*1 Christec, Pilatgana eraman içanic, 2 Iuduén regue dela aithortzen. 7 Barabbas. 15 Pilatec Barabbas largatzen, eta Christ crucificatzeco liuratzen. 19 29 Christ escarniatzen eta otrageatzen. 24 Crucificatzen, 27 Gaichtaguinequin. 33 Herri gucian ilhundu. 37 Christec spiritua rendatu. 39 Centenera. 40 Emazteac. 43 Christen sepulturá.*

*Mat.27.1 luc 22.66. ioan.18.20*

1 ETa bertan goicean conseillu eduquiric Sacrificadore principaléc Ancianoequi eta Scribequin eta consistorio gucia requin, estecaturic Iesus eraman ceçaten, eta liura cieçoten Pilati.

2 Orduan interroga ceçan, hura Pilatec, Hi aiz Iuduen Reguea? Eta harc ihardesten çuela erran cieçón, Hic dioc.

3 Eta anhitz gauçaz accusatzen çutén hura Sacrificadore principaléc.

*Mat 27.12 luc 23. 3. ioan.18. 33*

4 * Eta Pilatec berriz interroga ceçan, cioela, Eztuc deus ihardesten? huná, cembat gauçaz hire contra testificatzen dutén.

5 Baina Iesusec deus etzeçan guehiagoric ihardets: *hala* non miresten baitzuen Pilatec.

6 Eta bestan largatzen ohi cerauen presonerbat, ceinen-ere esca bailitez.

7 Eta çen Barabbas deitzen cembat presonér seditioneco lagunequin, heriotze mutinationez

eguin çuenic.
8 Eta oihuz iarriric populua has cedin eſcatzen *eguin liecén* bethiere eguin vkan cerauē beçala.
9 Eta Pilatec ihardetſi cerauē, cioela, Nahi duçue larga dieçaçuedan Iudućn Regueá?
10 (Ecen baceaquian nola hura inuidiaz liuratu çutén Sacrificadore principaléc)
11 Eta Sacrificadore principaléc incita ceçatē populua lehen Barabbas larga liecén.
12 Eta Pilatec ihardeſten çuela, berriz erran ci ecén, Cer bada nahi duçue daguiodan Iudućn Regue deitzen duçuen huni?
13 Eta hec berriz oihu eguin ceçaten, Crucifica eçac.
14 Eta Pilatec erraiten cerauen, Baina cer gaizqui eguin du? Eta hec hambat oihu guehiago eguin ceçaten, Crucifica eçac.
15 Pilatec bada populuaren gogara eguin nahiz, larga ciecen Barabbas, eta Ieſus açotaturic liura ciecén crucifica ledinçat.
16 Orduan gendarmeſec eraman ceçaten hura ſala barnera, cein baita pretorioa, eta dei ceçaten banda gucia.
17 Eta vezti ceçaten hura eſcarlataz, eta inguru eçar cieçoten *buruan* elhorri plegatuzco coroabat.
18 Eta has citecen haren ſalutatzē, *cioitela*, Vngui hel daquiala, Iuduen Regueá.
19 Eta baceraunſaten haren buruäri canabera batez, eta thu eguiten çuten haren contra, eta belhauricaturic reuerentia eguiten ceraucaten.

20 Guero harçaz truffatu ciradenean, eraunz cieçoten eſcarlatazcoa, eta vezti ceçaten bere abillamenduéz: eta camporat eraman ceçaten crucifica leçatençat.

Matth.27.32, luc 23.26

21 * Eta bortcha ceçaten bideazco Simon Cyreniano *deitzen* cembat, landetaric heldu cela, (cein baitzén Alexandreren eta Ruforen aita) haren crutzea eraman leçançat.

Mat.27.33 luc 23.33 ioan.19.17

22 * Guero eraman ceçaten Golgothaco lekura, cein erran nahi baita, Bur-heçur lekua.

23 Guero eman cieçoten edatera mahatſarno myrrharequin nahaſteca, baina harc etzeçã har

Mat.27.35 luc 23.33 ioan.19.23

24 * Eta crucificatu çutenean, parti citzaten haren abillamenduac, çorthe egotziric hayén gainean, norc cer ioan leçaqueen.

25 Ciraden bada hirur orenac hura crucificatu çutenean.

26 Eta cen haren cauſaren inſcriptionea *hunela* ſcribatua, IVDVEN REGVEA.

27 Eta harequin crucifica citzaten bi gaichtaguin: bata haren eſcuineã, eta bercea ezquerreã.

Eſa.53.12.

28 Eta compli cedin Scriptura dioena, * Eta gaizquiguilequin eſtimatu içan da.

Ioan.2.19.

29 Eta iragaitẽ ciradenéc iiuriatzẽ çutẽ bere buruac higuitzẽ cituztela, eta cioitela, He, * tẽplea deſeguiten eta hirur egunez edificatzen duaná.

30 Empara eçac eure buruã, eta iautſi adi crutzetic.

31 Halaber Sacrificadore principalec-ere eſcarnioz elkarri erraiten ceraucaten Scribequin, Berceac emparatu ditu, bere buruã ecin empara

deçaque.

32 Christ Israeleco Reguea iauts bedi orain crutzetic,ikus eta sinhets deçagũçat. Harequin crucificatu içan ciradenec-ere iniuriatzẽ çutén.

33 Baina sey orenac ciradenean, ilhũbe eguin cedin lur guciaren gaineã bedratzi orenetarano

34 Eta bedratzi orenetan oihu eguin ceçan Iesusec ocẽgui,*Eloi,Eloi,lammasabachthani? erran nahi baita, Ene Iaincoa,Ene Iaincoa, ceren abandonnatu nauc? *Psal.22.1. Mat.27.46*

35 Eta han ciradenetaric batzuc ençun çutenean,cioiten, Huná, Elias deitzen du.

36 Laster eguin ceçan bada batec,* eta spongiabat betheric vinagrez,eta eçarriric canabera baten inguruãn,eman cieçón edatera,cioela,Vtzaçue: dacussagun eya ethorriren denez Elias horren kencera. *Psal.69.22*

37 Eta Iesusec oihu handibat eguinic, spiritua renda ceçan.

38 Eta templeco velá erdira cedin bi çathitara garaitic behererano.

39 Eta ikus ceçanean haren aurkã cegoen Cẽtenerac, ecen hala oihu eguinic spiritua rendatu çuela,erran ceçan,Eguiazqui guiçon haur Iaincoaren Semea cen.

40 Eta baciraden emazteac-ere vrrundanic beha ceudela,ceinén artean baitzen Maria Magdalena,eta Maria Iacques chipiaren eta Iosesen amá,eta Salome.

41 Eta hec, Galilean cenaz gueroztic* iarreiqui içan çaizcan eta cerbitzatu vkan çuten: eta *Luc 8.2.*

anhitz berce *emazte* harequin batean Ierusalémera igan içan ciradenic.

*Matth.27.57. luc 23.50. ioan. 19.38*

42 * Eta arrastu cenean (ceren Sabbathoaren aitzinetic den preparationeco eguna baitzén)

43 Ethorriric Ioseph Arimatheacoa, conseillér ohoratua, hura-ere Iaincoaren resumaren beguira cegoena, ausart cedin Pilatgana sartzera, eta esca cequión Iesusen gorputzaren.

44 Eta Pilatec mirestén çuen baldin ia hil baliz: eta Centenera deithuric, interroga ceçan hura, eya baçuenez heuraguiric hil cela.

45 Eta *gauçá* eçaguturic Centeneraganic, emã cieçón gorputza Iosephi.

46 Eta *harc* mihissebat erossiric, eta hura erautsiric estal ceçan mihisseaz: eta eçar ceçan arroca batetan ebaquia cen monumentean: eta itzuliz eçar ceçan harribat monument borthán.

47 Eta Maria Magdalena eta Maria Iosesen *ama*, beha ceuden non eçarten cen.

## CAP. XVI.

2 *Emazteac sepulchrera ethorte͂. 6 Ainguerua͂ hey minçatzen. 9 Christ Magdalenari aguertzen,* 12 *Guero bi bideazcori,* 14 *eta Apostolu increduley.* 15 *Apostoluac ditu predicatzera eta batheyatzera igorten.* 16 *Sinhesteaz eta Baptesmoaz.* 17 *Miraculuéz.* 19 *Christen ascensioneaz.*

*Luc 24.1 ioan.20.1*

1 * ETa Sabbathoa iragan cenean, Maria Magdalenac eta Maria Iacquesen *amác* eta Salomec eros citzaten vnguentu aromaticoac, ethorriric hura embau-

ma leçatençat.

2 Eta guciz goiz astearen lehen eguneã ethorten dirade monumentera, iguzquia ia ilki ceneã

3 Eta erraiten çuten elkarren artean, Norc aldaraturen draucu harria monument borthatic?

4 Eta miratu çutenean, ikus ceçaten harria aldaratua cela: ecen guciz handia cen.

5 * Guero monumentera sarthuric, ikus ceçatē lagun gaztebat escuineco aldean iarria, abillamendu churi luce batez veztitua: eta ici citecen

*Matt.28.1 ioan.20.12*

6 Baina harc dioste, Etzaiteztela ici: Iesus Nazareth crucificatu içan denaren bilha çabiltzate, resuscitatu da: ezta hemen, huná lekua non eçarri vkan çutén.

7 Baina çoazte, erran iezeçue harē discipuluey eta Pierrisi, ecen çuen aitzinean ioaiten dela Galileara: han hura ikussiren duçue, *erran drauçuen beçala.

*Matth.26. 32. leben 14.28*

8 Eta hec bertan partituric ihes eguin ceçaten monumentetic: ecen ikarac eta iciapenec har citzan: eta nehori deus etzeraucaten erraitē: ecen beldur ciraden.

9 Eta Iesus resuscitatu cenean, asteco lehen egun goicean,* aguer cequión lehenic Maria Magdalenari, *ceinetaric çazpi deabru campora egotzi baitzituen.

*Ioan.20.16 Luc 8.2.*

10 Harc ioanic conta ciecén, Iesusequin içan ciradeney, ceinéc dolu ekarten baitzuten eta nigar eguiten.

11 Eta hec ençun ceçatenean ecen vici cela, eta harc ikussi çuela, etzeçaten sinhets.

*Luc 24.13* 12 Guero gauça hauén ondoan *hetaric bi ioaiten ciradeni aguer cequién berce formatan, camporat partitzen ciradela.

13 Eta hec itzuli ciradenean conta ciecen bercéy: baina etzitzaten hec-ere ſinhets.

*Luc 24.36* *ioan.20.19* 14 * Azquenic, elkarrequin iarriric ceudela hamequey aguer cequién, eta reprotcha ciecen hayén incredulitatea, eta bihotz gogortaſſuna: ceren hura reſuſcitaturic ikuſſi vkan çutenac ezpaitzituzten ſinhetſi.

*Mat.28.19* 15 Eta erran ciecén,* Çoazte mundu orotara, eta predica ieçoçue Euãgelioa creatura guciari

16 Sinhetſirẽ duena eta batheyaturẽ dena ſalua *Ioan.12.48* turẽ da: *baina ſinhetſirẽ eztuena cõdẽnaturẽ da

17 Eta ſigno hauc ſinhetſi duqueiteney iarrei- *Act.16.18* quiren çaizté * Ene icenean deabruac campora *Act.2.4* *eta 10.46* egotziren dituzté, * lengoage berriz minçaturen dirade:

*Act.28.6* 18 * Sugueac kendurẽ dituzté: eta baldin cerbait heriotaracoric edan badeçate, eztraue calte- *Act.28.8* ric eguinen: *erien gainean eſcuac eçarriren dituzté, eta ſendaturen dirade.

*Luc 24.51.* 19* Eta Iauna gauça hauçaz hæy minçatu içan çayenean, goiti cerurát altcha cedin, eta iar cedin Iaincoaren eſcuinean.

20 Hec-ere partituric predica ceçaten leku gu- *Heb.2.4* cietan, * Iaunac hequin obratzen çuela, eta hitza confirmatzen çuela iarreiquiten ciraden ſignoéz.

Ieſus

# IESVS CHRISTEN EVANGELIO SAINDVA S. LVC-EN ARAVRA.

## CAP. I.

*1 Zacharias, Elisabet. 13 Zachariasi, Ioannes eritziren çayon semebat promettatu. 15 Hura nolaco içanen. 20 Zacharias bere incredulitateagatic demboratacotz mututu. 24 Elisabethec concebitu. 28 Aingueru Gabrielec Maria salutatzen, eta Christen concebitzeaz eta sortzeaz aduertitzen. 35 Iaincoaren Semea. 39 Mariac Elisabeth visitatzen, 46 eta cãticoaz Iauna laudatzen. 68 Zachariasen canticoa. 57 Ioannesen sortzea. 76 Haren officioa.*

1 CEren anhitzec escu eçarri baitu narratione batẽ scribatzera complituqui gure artean certificatu içan diraden gaucéz,

2 Eçagutzera eman draucuten beçala lehen hatsetic ikussi dituztenéc eta hitzaren ministre içan diradenéc.

3 Niri-ere on iruditu içan çaitadac gucia hatsetic finerano diligentqui comprehenditturic, hĩri punctuz punctu *heçaz* scribatzera, o Theophile gucizco excellenteá:

4 Hobequi eçagut deçánçat ikaſſi dituán gaucén eguiá.

1.Chro.24. 11.

5 HERODES Iudeaco regueren egunetan cē Zacharias deitzē cen Sacrificadorebat, * Abiar en araldetic:eta haren emaztea *cen* Aaronen alabetaric, eta haren icena Eliſabeth.

6 Biac ciraden iuſto Iaincoaren aitzinean, Iaunaren, manamendu eta ordenança gucietan reprochuric gabe çabiltzanac.

7 Eta haourric etzutén, ceren Eliſabeth ſteril baitzen, eta biac baitziraden adïnez aitzinaratuac.

8 Guertha cedin bada, harc Iaincoarē aitzineā bere aldian ſacrificadoregoa exercitzen çueneā,

9 Sacrificadoregoaren officioco coſtumarē a-raura, çorthea eror baitzequión Iaunaren templean ſarthuric* encenſamenduaren eguiteco.

Exod.30.7 Leui.16.17

10 * Eta populu guciac campoan othoitz eguiten çuen encenſamendua eguiten cen orduan.

11 Eta aguer cequión Iaunaren Ainguerua, cegoela encenſamenduco aldarearen eſcuineā.

12 Eta Zacharias trubla cedin *hura* ikuſſiric, eta icidurabat eror cedin haren gainera.

13 Orduan errān ciecón Ainguerüāc, Eztuala beldurric Zacharias:ecē ençun içan duc hire othoitzá, eta Eliſabeth eure emaztea erdiren çaic ſeme batez:eta hari icen emanē draucac Ioānes

14 Eta bozcario eta alegrança vkanen duc, eta anhitz haren ſortzearen gainean alegueraturen dituc,

15 Ecen handi içanen duc Iaunaren aitzinean,

eta mahatsarnoric ez *berce* arnoric eztic edanẽ: eta Spiritu sainduaz betheren datec bere amaren sabeleandanic.

16 *Eta anhitz Israeleco haourretari cconuertituren dic berén Iainco Iaunagana. Mala.4.5. marc.9.11

17 * Eta hura ioanen duc haren aitzinean Eliasen spiriturequin eta verthuterequin, * conuerti ditzançat aitén bihotzác semetara eta desobedientac iustoén çuhurtassunera: Iaunari populu vngui instruitubat appain dieçonçat. Mat.3.1 Mala.4.6

18 Orduan erran cieçon Zachariasec Aingueruäri, Nolatán hori eçaguturen dut? ecen ni nauc çahar, eta ene emaztea duc bere egunetan aitzinaratua.

19 Eta ihardesten çuela Ainguerüäc erran cieçon, Ni nauc Gabriel Iaincoaren aitzinean assistitzen naicena, eta igorri içan nauc hirequin minçatzera, eta berri on hauen hiri declaratzera.

20 Eta horrá, mutu içanen aiz eta ecin minçaturen aiz, gauça hauc eguin ditecen egunerano: ceren ezpaitituc sinhetsi ene hitz bere demborán complituren diradenac.

21 Eta populua cegoen Zachariasen beguira, eta miresten çuen nola harc hambat berancen çuen templean.

22 Eta ilki cenean ecin minça cequidien, eta eçagut ceçaten ecen *cembeit* visione ikussi çuela templean: ecen keinuz aditzera emaiten cerauen, eta mutu gueldituican cen.

23 Eta guertha cedin, haren officioco egunac

acabatu ciradenean, bere etcherát itzul baitzedin.

24 Eta egun hayén ondoan haren emazte Elisabethec concebi ceçan:eta estal cedin borz hilebethez,cioela,

25 Segur, hunela eguin vkan draut Iaunac, visitatu nauen egunetan, ene laidoa guiçonén artetic ken leçançat.

26 Eta seigarren hilebethean igor cedin Gabriel Aingueruä Iaincoaz Galileaco hiri Nazareth deitzen denera:

Mat.1.18. 27* Dauid-en etchetico Ioseph deitzen cen guiçon-batequin fedatua cen virgina batgana: eta virginaren icena *cen* Maria.

28 Eta Aingueruäc hura baithara sarthuric,erran ceçan, Salutatzen aut gratia eguin çainaná: Iauna *dun* hirequin, benedicatua hi emaztén artean.

29 Eta hura, *Ainguerua* ikussiric trubla cedin haren erranaren gainean,eta peinsatzen çuen ceric licén salutatione hura.

30 Orduan diotsa Aingueruäc, Mariá,eztunala beldurric, ecen eriden dun gratia Iaincoa baithan.

Esa.7.14 Mat.1.23 mat.1.21. berriz2.11 31 * Eta horrá, concebituren dun *eure* sabeleã, eta erdiren aiz seme batez,* eta deithuren dun haren icena Iesus.

32 Hura içanen dun handi,eta eritziren ciayón Subiranoaren Semé: eta emanen diraucan Iainco Iaunac bere aita Dauid-en thronoa.

Dan.7.14. 27 mich.4.7 33 * Eta regnaturen din Iacob-en etchearen

gainean eternalqui, eta haren resumaren finic eztun içanen.

34 Erran ciecón orduan Mariac Ainguerüäri, Nola içanen da hori, guiçonic eçagutzen eztudanaz gueroz.

35 Eta ihardeſten çuela Ainguerüäc erran cieçón, Spiritu ſaindua hire gainera ethorriren dun eta Subiranoaren verthuteac itzal eguinẽ draun eta halacotz hitaric ſorthuren den ſaindua, Iaincoaren Seme deithuren dun.

36 Eta hará, Eliſabeth hire lehen guſſua, harcere concebitu din ſemebat bere çahartzean, eta hil haur din ſeigarrena ſteril deitzen cenac.

37 Ecen eztun deus impoſſibleric içanen Iaincoa baithan.

38 Eta erran ceçan Mariac, Huná Iaunaren neſcatoa: eguin bequit hire hitzaren araura. Eta par ti cedin harenganic Ainguerüä.

39 Eta iaiquiric Maria egun hetan ioan cedin mendietara lehiatuqui Iudaco hiri batetara.

40 Eta ſar cedin Zachariaſen etchera, eta ſaluta ceçan Eliſabeth.

41 Eta guertha cedin, ençun ceçanean Eliſabethec Mariaren ſalutationea, iauz baitzedin haourra haren ſabelean, eta bethe cedin Spiritu ſainduaz Eliſabeth:

42 Eta oihuz iar cedin voz handiz, eta erran ceçan, Benedicatua hi emaztén artean, ecen benedicatua *dun* hire ſabeleco fructua.

43 Eta nondic haur niri, ethor dadin ene Iaunaren ama enegana?

44 Ecen huná, hire ſalutationearẽ voza ene beharrietara heldu içan den beçain ſarri, iauci içan dun bozcarioz haourra ene ſabelean.
45 Eta dohatſu *aiz* ſinhetſi baitun, ceren complituren baitirade Iaunaz erran çaizquinan gauçác.
46 Eta dio Mariac, Magnificatzen du ene arimác Iauna.
47 Eta alegueratu da ene ſpiritua Iainco ene Saluadorea baithan.
48 Ceren behatu vkan baitu bere neſcatoaren beherataſſunéra: ecen huná, hemendic harat dohatſu erranen naute generatione guciéc.
49 Ecen gauça hãdiac eguin drauzquit botheretſu denac: eta haren icena ſaindu *da*:
50 Eta haren miſericordia *da* generationetaric generationetara haren beldurra dutenetara.
51 * Botheretſuqui eguin vkan du bere beſſoaz: * deſeguin ditu ſuperboac berén bihotzeco pẽſamenduan.
52 Egotzi ditu botheretſuac thronoetaric, eta goratu ditu chipiac.
53 * Goſſe ciradenac bethe ditu onez: eta abratſac igorri ditu hutſic.
54 * Suſtengatu vkan du Iſrael bere haourra, *bere* miſericordiáz orhoit içanez.
55 * Gure aitey minçatu çayen beçala, Abrahami eta haren haciari iagoiticotz.
56 Eta egon cedin Maria harequin hirur hilebetherẽ inguruä: guero itzul cedin bere etcherát.
57 Eta compli cedin Eliſabethẽ ertzeco dem-

*Eſa.51.9 Pſal.33.10 eſa.29.15*

*1.Sam.2.5 pſal.34.11.*

*Eſa.30.18 eta 41.8. eta 54.5 hiere.31.3. Gen.17.19 eta 22.15. pſal.132.11*

borá:eta erdi cedin ſeme batez.

58 Eta ençun ceçaten haren auçoéc eta ahaidéc, nola frangoqui Iaunac bere miſericordia declaratu çuen harengana,*eta alegueratzen ciraden harequin.

Hunetã 14

59 Eta guertha cedin, çortzigarreneco eguneaan ethor baitzitecen haourtchoaren circonciditzera, eta deitzen çuten hura bere aitaren icenaz, Zacharias.

60 Baina ihardeſten çuela haren amac erran ceçan, Ez, baina deithuren da Ioannes.

61 Eta erran cieçoten, Eztun nehor hire ahaidetan icen horrez deitzen denic.

62 Orduan keinu eguin cieçoten haren aitari, nola nahi luen hura dei ledin.

63 Eta *harc* tableta batzurẽ eſcaturic ſcriba ceçan, cioela,*Ioannes da horrẽ icena. Eta mirets ceçaten guciéc.

Hunetã 13

64 Eta irequi cedin bertan haren ahoa, eta haren mihia *lacha cedin*:eta minço cen laudatzen çuela Iaincoa.

65 Eta icidura ethor cedin aldiri hetaco gucién gainera, eta Iudaco herri mẽdiçu orotan publica citecen hitz hauc guciac.

66 Eta ençun cituzten guciéc, eçar citzatẽ bere bihotzeã, erraitẽ çutela, Nór haourtcho haur içanen da? Eta Iaunaren eſcua cen harequin.

67 Orduan haren aita Zacharias bethe cedin Spiritu ſainduaz:eta prophetiza ceçan, cioela,

68* Laudatu *dela* Iſraeleco Iainco Iauna, ceren viſitatu eta redemitu baitu bere populua.

Berriz 2.30 mat.1.22.

Psa.132.17 69 * Eta alchatu baitraucu ſaluamendutaco adarra Dauid bere cerbitzariaren etchean.

Psal. 132.17 hier.23.6 eta 30.10. 70 * Nola minçatu içan baita bere Propheta ſaindu bethidanic içan diradenen ahoz.

71 Salbu içanẽ guinela gure etſayetaric eta guri gaitz çarizcuten gucién eſcutic.

72 Gure aitey miſericordia leguiençat, eta orhoit licén bere alliança ſainduaz:

Gen.22.16 hie.31.33 heb. 6.13.17 73 * Eta gure Aita Abrahami eguin ceraucan iuramenduaz:

74 Ecen emanen ceraucula, beldur gabe gure etſayén eſcuetaric deliuraturic, hura cerbitza guineçan,

1.Pier.1.15 75 * Sainduta ſſunetan eta iuſtitiatan haren aitzinean, gure vicico egun gucietan.

76 Eta hi haourtchoá, Subiranoaren Propheta deithuren aiz: ecen ioanen aiz Iaunaren beguitharte aitzinean, haren bideac appain ditzançat,

77 Eta eman dieçoançat ſaluamenduco eçagutzea haren populuari, hayén bekatuén barkamenduaz.

Zach.4.12. malach.4.2 78 Gure Iaincoaren affectione miſericordioſoaz, ceinez viſitatu vkan baiquaitu, * Orientaç garaitic:

79 Argui daguiençat ilhumbean eta herioaren itzalean iarriric daudeney, gure oinen baquezco bidera chuchenceagatic.

80 Eta haourtchoa handitzen eta ſpirituz fortificatzen cen: eta egon cedin deſertuetan Iſraeli manifeſtatu behar içan çayón egunerano,

## CAP. II.

1 *Munduaren descriptionea.* 10 *Christ Saluadorea sorthu dela artzainey declaratzen.* 14 *Aingueruén canticoa.* 21 *Christ circoncidity eta Iesus deithu.* 22 *Mariaren purgationea.* 28 *Christ Simeonec bessoetara hartu, Simeonen canticoa.* 36 *Anna prophetessa.* 40 *Christ haourra.* 46 *Doctorequin disputatzen.* 48 *Haren haourgoáz.*

1 ETa guerta cedin egun hetan ethor baitzedin ordenança bat Cesar Augustoren partez, scribuz iar ledin mundua oro,
2 (Lehen descriptione haur eguin cedin Cyrenius Syriaco gobernadore cenean)
3 Eta ioaiten ciraden guciac scributan iartera, batbedera cein bere hirirát.
4 Igan cedin bada Ioseph-ere Galileatic, Nazaretheco hiritic, Iudeara, * Dauid-en ciuitate Bethlehem deitzen denera (ceren baitzén Dauid-en etchetic eta arraçatic)

*Ioan 7.42.*

5 Scributan iar ledinçát Maria emaztetā eman içan çayonarequin, cein baitzén içorra.
6 Eta guertha cedin *hec* han ciradela, compli baitzitecen haren ertzeco egunac.
7 Eta erdi cedin bere seme lehen iayoaz, eta bandatoz trocha ceçan hura, eta eçar ceçan mangederán, ceren ezpaitzén hayendaco lekuric ostalerián.
8 Eta ciraden comarca berean artzain campoetan ceunçanac, eta gauazco veillác bere ar-

thaldearen gainean beguiratzen cituztenac.

9 Eta huná, Iaunaren Ainguеruä vſtegaberic ethor cequién, eta Iaunaren gloriác argui ceçan hayén inguruän, eta icidura handiz ici citecen.

10 Orduan erran ciecén Ainguеruäc, Etzaretela beldur: ecen huná, euangelizatzen drauçuet bozcario handi populu guciaren içanen dena:

11 Ecen Dauid-en ciuitateã iayo çaiçuela Saluadorea, cein baita Chriſt Iauna.

12 Eta haur vkanen duçue ſeignale, eridenen baituçue haourra bandatoz trochatua, mangederán eçarria.

13 Eta bertan Ainguеruärequin eguin cedin armada celeſtial multzobat, laudatzen çutela Iaincoa, eta cioitela,

14 Gloria *ceru* guciz goretan Iaincoari, eta lurrean baque, guiçonac baithara vorondate ona.

15 Eta guertha cedin, hetaric Ainguеruäc cerurat ioan ciradenean, erran baitzeçaten artzainec elkarren artean, Goacen bada Bethlehemerano, eta dacuſſagun eguin içan den gauça haur, cein Iaunac iaquin eraci baitraucu.

16 Eta ethor citecen lehiatuqui, eta eriden citzaten Maria eta Ioſeph, eta haourtchoa mangederán eçarria.

17 Eta ikuſſi vkan çutenean, publica ceçaten haourtchoaz erran içan çayena.

18 Eta ençun vkan cituzten guciéc mirets ceçaten hæy artzainéz erran içan çaizten gaucén gainean.

19 Eta Mariac beguiratzen cituen gauça hauc

guciac, bere bihotzean ehaiten cituela.

20 Eta itzul citecen artzainac, glorificatzen eta laudatzen çutela Iaincoa, ençun eta ikuſſi vkan cituzten gauça guciéz, erran içan çayen beçala.

21 *Eta complitu içan ciradenean haourtchoaren circonciditzeco çortzi egunac, *orduan deithu içan da haren icena Ieſus, nola deithu içan baitzén Aingueruäz; ſabelean concebi cedin baino lehen.

Gen. 17. 12 leuit. 12. 3. Leben 1. 31 matt. 1. 21 ioan 7. 22.

22 Eta complitu içan ciradenean Mariaren purificationeco egunac *Moyſeſen leguearen arauez, eraman ceçaten haourtchoa Ieruſalemera, Iaunari preſenta lieçotençát.

Leuit. 12. 6

23 (Nola baita ſcribatua Iaunaren Leguean, *Ar vme-vncia irequitẽ duen gucia, ſaindu Iaunari deithuren çayó)

Exo. 13. 12. nomb. 3. 13

24 Eta eman leçatençát oblationea, *Iaunaren Leguean erran denaren araura, turturela parebat, edo bi vſſo columba vme.

Leuit. 12. 7

25 Eta huná, cen guiçombat Ieruſalemen Simeon deitzen cenic: *eta cen* guiçon haur iuſto eta Iaincoaren beldur, Iſraeleco conſolationearen beguira cegoena: eta Spiritu ſaindua cen haren gainean.

26 Eta denuntiatu içan çayón diuinoqui Spiritu ſainduaz, etzuela herioric ikuſſirẽ, non lehen ikus ezleçan Chriſt Iaunarena.

27 *Hura* bada ethor cedin Spirituaz *mouituric* templera: eta ſartzen çutela Ieſus haourra bere aita-amée, haren cauſaz eguin leçatençát Legueco coſtumaren araura:

28 Harc orduan har ceçan hura bere beſſoetara, eta lauda ceçan Iaincoa, eta erran ceçan,

29 Iauna, orain vtziten duc eure cerbitzaria, eure hitzaren araura baquez.

30 Ecen ikuſſi dié ene beguiéc hire ſaluagarria,

31 Cein preparatu baituc populu gucién beguitharte aitzinean.

32 Argui Gentiley arguitzecoa, eta Iſraëléco hire populuaren gloriá.

33 Eta haren aita eta ama miraz ceuden harçaz erraiten ciraden gaucéz.

34 Eta benedica citzan Simeonec, eta erran cieçón haren ama Mariari, * Huná, eçarri içan dun haur anhitzen deſtructionetā, eta anhitzen reſurrectionetan Iſraelen, eta ſignotan ceini nehor contraſtaturen baitzayo:

Eſa. 8. 14 rom. 9. 32. 1. pier. 2. 8.

35 Are eurorren arima-ere iraganen din ezpata batec, aguer ditecençát anhitz bihotzetaco penſamenduaç.

36 Bacén propheteſſabat-ere Anna *deitzen cenic* Phanuel-en alaba, Aſer-en leinuço, cein baitzén ia adin handitacoa, eta vici içan cen ſenharrarequin çazpi vrthez bere virginitateaz gueroztic.

37 Eta lauroguey eta laur vrtheren inguruco alharguna celaric, etzen partitzē templetic, barurez eta orationez cerbitzatzen çuela *Iaincoa* gau eta egun.

38 Hunec-ere bada ordu berean ethorriric, laudatzē çuen Iauna, eta harçāz minço çayē redēptionearen beguira Ieruſalemen ceudē guciey.

39 Eta acabatu çutenean gucia Iaunaren Leguearen araura, itzul citecen Galileará, bere Nazaretheco hirira.
40 Eta haourtchoa handitzen cen eta ſpirituz fortificatzen, eta bethatzen cen ſapientiaz: eta Iaincoaren gratiá cen haren gainean.
41 Eta ioaiten ciraden haren aita-amác vrthe oroz Ieruſalemera *Bazco beſtán. *Deut. 16.1*
42 Eta hamabi vrthetara heldu cenean, igan citecen hec Ieruſalemera beſtaco coſtumaren arauez:
43 Eta *hartaco* egunac complitu ciradenean, hec itzultzẽ ciradela, azquen cedin Ieſus haourra Ieruſalemen: eta etzaquión ohart Ioſeph, ez bere ama:
44 Baina vſtez hura compainian cen, ioan citecen egun baten bidean: eta haren bilha çabiltzan ahaidén eta eçagunén artean.
45 Eta erideiten etzutenean, bihur citecen Ieruſalemera, haren bilha çabiltzala.
46 Eta guertha cedin, hirur egunen buruän eriden baitzeçatẽ hura templean, iarriric cegoela doctoren artean, hæy behatzen çayela eta hec interrogatzen cituela.
47 Eta ſpantatzen ciraden hura ençuten çutén guciac, harẽ iaquinaren eta reſpoſtuén gainean.
48 Eta hura ikuſſiric ſpanta citecen: eta erran cieçón bere amác, Semé, cergatic horrela eguin draucuc? huná, hire aita eta ni keichuric hire bilha guiniabiltzán.
49 Orduã dioſte, Cergatic da ene bilha baitzi-

nabiltzaten? etzinaquitére eecen neure Aitaren eguitecoetan *occupatua* behar dudala içan?

50 Baina hec etzeçaté adi erran cerauen hitza.

51 Orduan iauts cedin hequin, eta ethor cedin Nazarethera: eta cen hayen suiet: eta haren amac beguiratzen cituen hitz hauc gucioc bere bihotzean.

52 Eta Iesus auãçatzen cen sapientiaz eta handitzez, eta gratiaz Iaincoa baithan eta guiçonac baithan.

## CAP. III.

*2 Ioannes predicatzen hatsen. 3 Penitentiataco Baptismoa. 6 Iaincoaren saluagarria. 8 Emendamendutaco fructuac. Abrahamen haourrac. 9 Aizcora erroari. 11 Charitatea. 12 Publicanoac. 14 Gendarmesac. 16 Ioannesec Christez testificatzen. Ioannesen eta Christen Baptismoa. 17 Bahea. bihia. lastoa. 20 Herodesec Ioannes presoindeguian eçarten. 21 Christ batheyatu, 23 haren genealogia.*

1 ETa Tiberio Cesaren emperadoregoaré hamaborzgarren vrthean, Pontio Pilate Iudeaco gobernadore cenean, eta Herodes Galileaco tetrarcha, eta haréanaye Philippe halaber Iturea eta Trachonite comarcaco tetrarcha, eta Lisania Abilineco tetrarcha,

*Act.4.6.* 2 *Eta Annas eta Caiphas Sacrificadore subirano ciradenean: eman cequión Iaincoaré hitza Ioannes Zachariasen semeari desertuan.

*Matth.3.1 marc 1.4.* 3 *Eta ethor cedin Iordanaren inguruco co-

marca gucira, predicatzen çuela emendamendutaco Baptiſmoa bekatuén barkamendutan:

4 Nola baita ſcribatua Eſaias prophetaren hitzén liburuän, dioela,* Deſertuan oihuz dagoenaren voza *da*, Appain eçaçue Iaunaren bidea, plana itzaçue haren bideſcác.

*Eſa.40.3. ioan 1.23.*

5 Haran gucia betheren da, eta mendi eta mendiſca gucia beheraturen da, eta makur diraden gauçác chuchenduren dirade, eta bide ikeçuac planaturen,

6 Eta ikuſſiren du haragui guciac Iaincoaren ſaluagarria.

7 Erraiten cerauen bada harenganic batheya litecençat ethorten ciraden gendetzey,* Vipera caſtá, norc auiſatu çaituzte ethorteco den hirari ihes eguiten?

*Matth.3.7*

8 Eguin itzaçue bada fructu emendamenduaren digneac: eta etzaiteztela has erraiten ceuroc baithan, Abraham dugu aita: ecen badiotſuet, Iaincoac harri hautaric-ere Abrahami haour ſuſcita, ahal dieçaqueola.

9 Bada ia aizcora-ere arborén errora eçarria da: beraz arbore fructu on eguiten eztuen gucia piccatzen da, eta ſura egoizten.

10 Orduan interroga ceçaten gendetzéc, cioitela, Cer eguinen dugu beraz?

11 Eta ihardeſten çuela erran ciecén,* Bi arropa dituenac eman bieço eztuenari: eta iatecoric duenac, halaber eguin beça.

*Iac.2.15. 1.ioã.3.17*

12 Ethor cedin publicanoetaric-ere batheya litecençat: eta erran cieçoten, Magiſtruá, cer

eguinen dugu?

13 Eta harc erran ciecén, Deus ordenatu çaiçuen baino guehiago ezteçaçuela erekar.

14 Interroga ceçaten gendarmesec-ere, cioitela, Eta guc cer eguinen dugu? Eta dioste, Nehor ezteçaçuela tormenta, ez iniuria: eta cõtenta çaitezte çuen gagéz.

15 Eta populua beha cegoela, eta guciéc bere bihotzetan pensatzen çutela Ioannesez, eya hura liçatenez Christ,

16 Ihardets ceçan Ioannesec, erraiten cerauela guciey, * Eguia da nic batheyatzen çaituztet vrez: baina heldu da ni baino borthitzago dena, ceinen çapatetaco hedearen lachatzeco ezpainaiz digne: harc batheyaturen çaituzte Spiritu sainduaz eta suz.

*Mat.3.11. marc 1.8. ioan 1.26. act.1.5. eta 11.16. eta 19.4.*

17 Ceinen bahea harē escuan *içanen baita*, eta garbituren du chahu bere larraina: eta bilduren du bihia bere granerera: baina lastoa choil erreren du bihinere hiltzen ezten suan.

18 Bada anhitz berce gauçaz-ere exhortatzen çuela euangelizatzen ceraucan populuari.

19 * Baina Herodes tetrarcha harçaz reprehenditzen cenean, Herodias bere anaye Philipperen emazteagatic, eta berac eguin cituen gaichtaqueria guciacgatic,

*Matt.14.3 marc 6.17.*

20 Eratchequi ceçā haur-ere *berce* gucién gainera, eçar baitzeçan Ioannes presoindeguian.

21 *Eta guertha cedin populu gucia batheyatzen cela, eta Iesus batheyaturic othoiztez cegoela, irequi baitzedin ceruä;

*Mat.3.13. marc 1.9. ioan 1.32.*

22 Eta

22 Eta iauts baitzedin Spiritu ſaindua forma viſibletan vſſo columba baten guiſſán, haren gainera, eta vozbat cerutic eguin baitzedin, cioela, Hi aiz ene Seme maitea, hitan hartzen diat neure atſeguin ona.

23 Eta Ieſus bera hatſen cen hoguey eta hamar vrtheren inguruco içaten, ſeme(eſtimatzen çuten becembatean) Ioſephen, Ioſeph cen Heliren *ſeme*:

24 *Heli* Matthaten: *Matthat*, Leuiren: *Leui*, Melchiren: *Melchi*, Iannaren: *Ianna*, Ioſephen:

25 *Ioſeph*, Matthatiaren: *Matthatia*, Amoſen: *Amos*, Nahumen: *Nahum*, Eſliren: *Eſli*, Naggeren:

26 *Nagger*, Maathen: *Maath*, Mattathiaren: *Mattathia*, Semeiren: *Semei*, Ioſephen: *Ioſeph*, Iudaren:

27 *Iuda*, Iohannaren: *Iohanna*, Rheſaren: *Rheſa*, Zorobabelen: *Zorobabel*, Salathielẽ: *Salathiel*, Neriren:

28 *Neri*, Melchiren: *Melchi*, Addiren: *Addi*, Coſamen: *Coſam*, Elmodamẽ: *Elmodam*, Eren:

29 *Er*, Ioſeren: *Ioſe*, Eliezeren: *Eliezer*, Ioramen: *Ioram*, Matthaten: *Matthat*, Leuiren.

30 *Leui*, Simeonen: *Simeon*, Iudaren: *Iuda*, Ioſephen: *Ioſeph*, Ionamen: *Ionam*, Eliacimen:

31 *Eliacim*, Melearen: *Melea*, Mainanen: *Mainan*, Mattatharen: *Mattatha*, Nathanen: *Nathan*, Dauid-en:

32 *Dauid*, Ieſſeren: *Ieſſe*, Obed-en: *Obed*, Boozen: *Booz*, Salmonen: *Salmon*, Naaſſonen:

33 *Naaſſon*, Aminadab-en: *Aminadab*, Aramen: *Aram*, Eſronen: *Eſron*, Phareſen: *Phares*, Iudaren:
34 *Iuda*, Iacob-en: *Iacob*, Iſaac-en: *Iſaac*, Abrahamen: *Abraham*, Thararen: *Thara*, Nachoren:
35 *Nachor*, Saruch-en: *Saruch*, Ragauren: *Ragau*, Phalec-en: *Phalec*, Heberē: *Heber*, Saleren:
36 *Sale*, Caïnanen: *Caïnan*, Arphaxad-en: *Arphaxad*, Semen: *Sem*, Noeren: *Noe*, Lamech-en:
37 *Lamech*, Mathuſalaren: *Mathuſala*, Henoch-en: *Henoch*, Iared-en: *Iared*, Mahalaleel-en: *Mahalaleel*, Cainanen:
38 *Cainan*, Henoſen: *Henos*, Seth-en: *Seth*, Adamen: *Adam*, Iaincoaren.

## CAP. IIII.

*2 Chriſt deſertuan tentatu. 4 Vicitzea Iaincoa baithan. 8 Iaincoa bera adoratzeco eta cerbitzatzeco, 12 eta ezhura tentatzeco. 21 Chriſtezco prophetiác complitu. 24 Prophetaric bere herrian ez gogaracoric. 26 Elias. 27 Naaman Syrianoa. 28 Nazarenoac Chriſtez ſcandalizatzen. 31 Chriſtec Sabbathoez iracaſten, eta 38 demoniatua, Pierriſen ama guinharreba, 40 eta anhitz berceric ſendatzen. 41 Deabruéc Chriſt eçagutzen eta aithortzen. 43 Chriſt certara igorri içan den.*

*Matth.4.1 marc 1.12.*

1 ETa *Ieſus Spiritu ſainduaz bethea parti cedin Iordanetic, eta eraman cedin Spiritu *beraz* deſertura,
2 Eta *han* tenta cedin deabruaz berroguey egunez: eta etzeçan deus ian egun

hec cirauteno, baina hec iragan eta, guero gosse cedin.

3 Orduan erran cieçón deabruac, baldin Iaincoaren Semea bahaiz, erróc harri huni ogui bilha dadin.

4 Eta ihardets cieçón Iesusec, cioela, Scribatua duc, * ecen eztela ogui berez vicico guiçona, baina Iaincoaren hitz guciaz.

Deut. 8.3. matth. 4.4.

5 Orduan eramanic hura deabruac mendi gora batetara, eracuts cietzon munduco resuma guciac dembora moment batez.

6 Eta diotsa deabruac, Emanen drauat bothere hori gucia, eta *resuma* horien gloriá: ecen niri eman içan ciaitadac, eta nahi dudanari emaiten diarocat.

7 Hic bada baldin adora baneçac, hire içanen dituc guciac.

8 Eta ihardesten çuela Iesusec erran cieçón, Guibelerat adi eneganic Satán: ecen scribatua duc, * Adoraturen duc eure Iainco Iauna, eta hura bera cerbitzaturen duc.

Deut. 6.16 eta 10.20.

9 Orduan eraman ceçan Ierusalemera, eta eçar ceçan templeco pinacle gainean: eta erran cieçón, Baldin Iaincoaren Semea bahaiz, egotzac eure burua hemendic beherera.

10 Ecen scribatua duc, *bere Ainguëruey cargu emanen drauela hiçaz, hire beguiratzeco:

Psal. 91.12

11 Eta escuetan eramanen autela, eure oinaz harrian behaztopa ezadinçát.

12 Baina ihardesten duela Iesusec diotsa, Errana duc, *Eztuc tentaturen eure Iainco Iauna.

Deut. 6.16

13 Gùero tentatione gucia acabatu eta, deabrua parti cedin harenganic dembora batetaranocotz.

14 Eta itzul cedin Iesus Spirituaren verthutez Galileara: eta haren famá ioan cedin inguruco comarca orotara.

15 Eta hura ari cen iracaſten hayén ſynagoguetan, guciéc ohoratzen çutela.

*Mat. 13.54 marc 6.1. ioan 4.43.* 16 *Ethor cedin bada Nazarethera non haci içan baitzén: eta ſar cedin bere coſtumaren araura Sabbath egunean ſynagogán: eta iaiqui cedin iracurtzera.

17 Eta eman cequión Eſaias prophetaren liburuä: eta deſplegatu çuenean liburuä, eriden ceçan lekua, non ſcribatua baitzén,

*Eſa. 61.1.* 18 *Iaunaren Spiritua da ene gainean, ceren vnctatu bainau: paubrey euangelizatzera igorri nau, bihotzez hautſien ſendatzera,

19 Captiuoey largançaren, eta itſuey ikuſtearen recubramenduaren predicatzera, eta çaurthuén deliurançatan eçartera, eta Iaunaren vrthe bozcariotacoaren predicatzera.

20 Eta plegaturic liburuä rẽdatu ceraucanean miniſtreari, iar cedin: eta ſynagogaco gucién beguiac haren gainera fincatuac ciraden.

21 Orduan has cequién erraiten, egungo egunean complitu da Scriptura haur çuen beharrietan.

22 Eta guciéc teſtimoniage emaiten ceraucaten, eta miraz ceuden haren ahotic ilkiten ciraden hitz gratiazcoéz, eta erraiten çuten, Ezta

haur Iosephen semea?

23 Eta erran ciecén, Frangoqui erranen drautaçue comparatione haur, Medicuá, senda eçac eure buruä: cerere gauça ençun baitugu eguin içan diradela Capernaum-en, eguin itzac hemen-ere eure hirian.

24 Eta dioste, Eguiaz diotsuet, ecen *Prophetaric batre eztela gogaracoric bere herrian. *Ioan 4. 44.*

25 Baina eguiaz erraiten drauçuet, *anhitz *ema* alhargun cen Eliasen egunetan Israelen, ceruä ertsi içan cenean hirur vrthe eta sey hilebethetacotz, *hala* non eguin baitzedin gossete handia lur guciaren gainean. *1. Reg. 17. 9 iac. 5. 17.*

26 Baina hetaric batetara-ere etzén igorri içan Elias, Sarepta Sidoniaco *hirira* baicen, emazte alhargun batgana.

27 *Eta anhitz sorhayo cen Israelẽ Eliseo prophetaren demborán, baina hetaric batre etzén chahutu içan Naaman Syriacoa baicen. *2. Reg. 5. 14*

28 Orduan bethe citecen guciac asserretassunez synagogán, gauça hauc ençuten cituztenean.

29 Eta iaiquiric egotz ceçatẽ hura hiritic campora, eta eraman ceçaten mendi gainera (ceinen gainean hayen hiria edificatua baitzẽ) gainetic behera egotz leçatençat.

30 Baina hura hayén artetic iraganic, ioan cedin.

31 Eta iauts cedin Capernaum Galileaco hirira,* eta han iracasten cituen Sabbathoetan. *Matt. 4. 13 marc 1. 21.*

32 *Eta spantatuac ceuden haren doctrinaren *Matt. 7. 29 marc 1. 22.*

gainean:ecen authoritaterequin cen harē hitza.

*Marc 1.23* 33 *Eta cē ſynagogán guiçōbat deabru ſatſuaren ſpiritua çuenic, eta iar cedin oihuz ocengui,

34 Cioela, Ah, cer da hire eta gure artean, Ieſus Nazarenoa? gure deſeguitera ethorri aiz? baceaquiat nor aicen: *hi aiz* Iaincoaren ſaindua.

35 Eta mehatcha ceçan hura Ieſuſec, cioela, Ichil adi, eta ilki adi horrenganic. Eta deabrua, hura artera egotziric, ilki cedin harenganic, eta calteric batre etzieçon eguin.

36 Eta ſpantamendu iar cedin gucietan, eta minço ciraden elkarrē artean, cioitela, Cer hitz da haur, authoritaterequin eta botherererequin manatzen baititu ſpiritu ſatſuac, eta ilkiten baitirade?

37 Eta io citzan haren famác herriaren inguruco comarca guciac.

*Mat.8.14. marc 1.30.* 38 *Eta iaiquiric Ieſus ſynagogatic, ſar cedin Simonen etchean: eta Simonen ama-guinharreba eduquiten cen helgaitz handi batez: eta othoitz ceguioten harengatic.

39 Eta haren garaitic cegoela mehatcha ceçan helgaitza: eta vtzi ceçan hura *helgaitzac*: eta *harc* bertan iaiquiric cerbitza citzan.

40 Eta iguzqui ſartzean, anhitz eritaſſun motaz eriric çuten guciéc ekar citzaten harēgana: eta harc eſcuac hetaric batbederari gainera eçarriric ſenda citzan.

*Marc 1.34* 41 *Deabruac-ere ilkiten ciradē anhitzēganic, oihuz ceudela, eta cioitela, Hi aiz Chriſt Iaincoaren Semea. Baina *harc* mehatchatzen citue-

la, etzituen vtziten erraitera, ecen baceaquitela hura cela Chriſt.

42 Eta arguitu cenean ilkiric ioan cedin leku deſertu batetara, eta gendetzeac haren bilha çabitzan, eta ethor citecen hura baitharano: eta baçaducaten hura hetaric parti ezledinçát.

43 Baina harc erran ciecén, Berce hiriey-ere euangelizatu behar drauet Iaincoaren reſumá: ecen hartacotzat igorri içan naiz.

44 Eta predicatzen çuen Galileaco ſynagoguetan.

## CAP. V.

*3 Chriſtec populua iracaſten. 5 Arrançalec anhitz arrain hartu. 13 Chriſtec ſorhayoa ſendatu, 16 eta deſertuan othoitz eguiten. 18 Paralyticoa, 20, 24 Fedea. Bekatuén barkamendua. 27 Mattheu deithu. 31 Oſſo diradenéz. 32 Iuſtoez. Bekatoréz. 34 Ezconduaz. 35 Barurraz. 36 Abillamenduco pedaçu berriaz. 37 Mahatſarno berriaz, 39 eta çaharraz.*

1 * ETa guertha cedin, populuac hura hertſen çuela Iaincoarẽ hitzaren ençuteagatic, bera Geneſarethco lac bazterrean baitzegoen:

*Matt. 4.18 marc 1.16.*

2 Eta ikus citzan bi vnci lac bazterrean ceudela: eta hetaric ilkiric arrançalec ſareac ikutzen cituzten:

3 Eta ſarthuric vnci hetaric batetara, cein baitzén Simonena, othoitz ceguión lurretit retira leçan appurbat: guero iarriric vncitic iracaſten

cituen gendetzeac.

4 Eta minçatzetic ichildu cen beçala, erran cieçón Simoni, eramac barnago, eta largaitzaçue çuen ſareac hatzamaitera.

5 Orduan ihardeſten duela Simonec diotſá, Magiſtruá, gau gucian nekaturic eztiagu deus hartu: baina hire hitzera largaturen diat ſarea.

6 Eta hori eguin çutenean, enſerra ceçaten arrain mola hãdibat: eta ethẽcen cen hayén ſarea.

7 Eta keinu eguin ciecén berce vncico laguney, ethorriric lagun lequiztén: eta ethor citecen, eta bethe citzaten bi vnciac hundatzerano.

8 Eta *hori* ikuſſiric Simon Pierriſec egotz ceçan bere buruä Ieſuſen belhaunetara, cioela, Parti adi eneganic, Iauna, ecen guiçon bekatorea nauc *ni*.

9 Ecen icidura batec har ceçan hura eta harequin *ciraden* guciac, hartu cituzten arrain hatzamaitearen gainean, halaber Iacques eta Ioannes Zebedeoren ſeme Simonẽ lagun ciradenac-ere.

10 Orduan erran cieçón Simoni Ieſuſec, Eztuála beldurric, oraindanic guiçon hatzamaile içanen aiz.

11 Eta vnciac leihorrera cituztenean gucia vtziric, hari iarreiqui içan çaizcan.

*Matth.8.2 marc 1.40.*

12 *Eta guertha cedin *hura* hiri batetan cela, huná, guiçon ſorhayotaſſunez bethebat *ethor baitzedin*: eta ikuſſi çuenean Ieſus, bere buruä beguitharte gainera egotziric othoitz ceçan hura, cioela, Iauna, baldin nahi baduç, chahu ahal neçaquec.

13 Eta *Iesusec* escua hedaturic hunqui ceçã hura, cioela, Nahi diat, aicén chahu. Eta bertã sorhayotassuna parti cedin harenganic.

14 Eta harc mana ceçan nehori ezlerrón: baina ohá, *diotsa*, eracuts ieçoc eure buruä Sacrificadoreari, eta presenta eçac eure chahutzeagatic * Moysesec ordenatu duen beçala hæy testimoniagetan.

Leuit.14.4

15 Eta harçazco proposa gueroago aitzinago hedatzen cen, eta gendetze handiac biltzen ciraden ençutera, eta bere eritassunetaric harçaz senda litecençát.

16 Baina bera retiratua cegoen desertuetan, eta othoitz eguiten çuen.

17 Eta guertha cedin egun batez hura iracastẽ ari cela, phariseuac eta Legueco doctorac baitzeuden iarriric, cein ethor baitzitecen Galileaco eta Iudeaco eta Ierusalemeco burgu gucietaric: eta Iaunaren verthutea cen hayén sendatzeco.

18 * Orduan huná batzu, dacarqueitela ohean guiçõ-bat cein baitzén paralytico: eta çabiltzã hura barnera ekarri nahaiz, eta haren aitzinean eçarri nahiz.

Mat.9.2 marc 2.3

19 Eta erideiten etzutenean nondic hura barnera liroiten, gendetzearen causaz, iganic etche gainera, teuletaric erauts ceçaten ohetchoarequin artera, Iesusen aitzinera:

20 Eta hayén fedea ikussi çuenean, erran cieçón, Guiçoná, barkatu çaizquic eure bekatuac.

21 Orduan has citecen pensatzen Scribác eta Phariseuac, cioitela, Nor da blasphemioac er-

raiten dituen haur? Norc barka ahal ditzaque bekatuac Iaincoac berac baicen?

22 Eta Iesusec eçaguturic hayén pensamenduac, ihardesten çuela erran ciecén, Cer pensatzen duçue çuen bihotzetan?

23 Cein da errachago, erraitea, Barkatu çaizquic eure bekatuac: ala erraitea, Iaiqui adi eta ebil adi?

24 Daquiçuēçat bada ecen guiçonarē Semeac baduela authoritate lurreā bekatuén barkatzeco (diotsa paralyticoari) Hiri erraiten drauat iaiqui adi, eta eure ohetchoa harturic habil eure etcherát.

25 Eta bertan iaiquiric hayén aitzineā, eta altchatu çuenean *bera* cetzan ohetchoa, ioan cedin bere etcherát, glorificatzen çuela Iaincoa.

26 Eta icidura batec har citzan guciac, eta glorificatzen çutén Iaincoa: eta bethe citecen beldurtassunez, erraiten çutela, Segur ikussi ditugu egun nehorc vste etzituqueen gauçác.

*Mat.9.9. marc 2.14.*

27* Eta gauça hayen buruän ilki cedin, eta ikus ceçan publicano Leui deitzen cēbat, peage lekuan iarriric, eta erran cieçón, Arreit niri.

28 Eta *hura* gauça guciac vtziric iaiqui cedin, eta iarreiqui içan çayón.

29 Eta eguin cieçón banquet handibat Leuic bere etchean, eta cen publicanoezco eta berce hequin mahainean iarriric ceudenezco compainia handibat.

30 Eta hetaric Scriba eta Phariseu ciradenéc murmuratzen çuten haren discipuluen contra,

cioitela, Cergatic publicanoequin eta gende vicitze gaichtotacoequin iaten eta edaté duçue?

31 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén, Oſſo diradenéc eztute medicuren beharric: baina gaizqui daudenéc.

32 * Eznaiz ethorri iuſtoén deitzera, baina bekatorén, emendamendutara. 1 Tim. 1. 15

33 * Eta hec erran cieçoten, Cergatic Ioãneſen diſcipuluéc barur eguiten dute maiz eta othoitz eguiten, halaber Phariſeuenec-ere: baina hiréc iaten eta edaten dute? Mat. 9. 14 marc. 2. 18

34 Eta harc erran ciecén, Barur eraci ahal ditzaqueçue ezconduaren gãberaco gendeac ezcondua hequin deno?

35 Baina ethorriren dirade egunac edequiren baitzaye ezcondua, orduan barur eguinen duté egun hetan.

36 Guero comparationebat-ere erran ciécen, Nehorc eztrauca eratchequiten abillamẽdu berri baten pedaçua abillamendu çar bati: ezpere berriac ethencen du: eta çarrarequin ezta accordatzen berritic *den* pedaçua.

37 Eta nehorc eztu eçarten mahatſarno berria çahagui çarretan, ezpere mahatſarno berriac çathituren ditu çahaguiac eta bera iſſuriren da, eta çahaguiac galduren dirade:

38 Baina mahatſarno berria çahagui berrietan eçarteco da: eta biac beguiratzen dirade.

39 Eta ezta nehor çaharretic edaten duenic, bertan berritic nahi duenic: ecen erraiten du, Çaharra hobe da.

CAP. VI.

*1 Diſcipuluac buruca idoquiten ari. 9 Eſcu eyarrha ſendatu. 12 Chriſtec othoitz eguiten. 14 Apoſtoluen icenac. 18 Eri anhitz ſendatu. 20 Paubreac. 20 Chriſtgatic affligituac.benedicatu. 23 Alocairuaz. 24 Abratſez. 27 Etſayen onheſteaz. 34 Preſtatzeaz. 35 Iaincoaren haour nolatan içanen. 35 Miſericordioſo içateco. 37 Ez iugeatzeco baina barkatzeco,eta emaiteco. 42 Fitſa beguian.Gapirioa. 43 Fructutic arborea eçagutzen. 45 Bihotzetic heldu eguinac. 49 Ençuna eguiten dutenac,eta eztutenac.*

*Mat.12.1 marc 2.23.* 1* GVertha cedin bada Sabbath *egun* bigarren lehenean, hura iragaiten baitzén ereincetan gaindi:eta buruca idoquitẽ ari.baitziraden haren diſcipuluac,eta iaten eſcuez bihituric.

2 Eta Phariſeuetaric batzuc erran ciecén,Cergatic eguiten duçue Sabbathoan eguin ſori eztena?

3 Orduan ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén,* Eztuçue haur-ere iracurri cer eguin çuen Dauid-ec goſſetu cenean bera eta harequin ciradenac? *1.Sam.21.6.*

4 Nola ſarthu içan cen Iaincoaren etchean eta propoſitioneco oguiac hartu cituen , eta ian cituẽ,eta emã ciecén harequin ciradeney-ere:* hetaric iatea Sacrificadorén baicen ſori eztelaric. *Exo.29.33 leuit.8.31. eta 24.6*

5 Guero erraiten cerauen,Guiçonaren Semea iabe da Sabbathoaren-ere.

*Mat.12.9. marc 3.1.* 6* Eta guertha cedin berce Sabbath batez-ere hura ſar baitzedin ſynagogara,eta iracaſten bai-

tzuen:eta cen han guiçon-bat eta haren eſcu eſcuyna cen eyhar.
7 Eta gogoatzen çuten hura Scribéc eta Phariſeuéc eya Sabbathoan ſenda leçaqueenez,accuſatione eriden leçatençat haren contra.
8 Baina baceaquizquian hayén penſamenduac,eta diotſa guiçon eſcu eyharra çuenari, Iaiqui adi, eta ago çutic artean. Eta hura iaiquiric egon cedin çutic.
9 Erran ciecén bada Ieſuſec, Interrogaturen çaituztet *gauça bate*z, Sabbathoetan vngui eguitea da ſori ala gaizqui eguitea? perſona batẽ emparatzea ala galtzea?
10 Eta hetara gucietara inguru behaturic, diotſa guiçonari, Hedeçac eure eſcua: eta harc eguin ceçan hala: eta ſenda cedin harẽ eſcua bercea beçain.
11 Eta bethe citecen eraucimenduz,eta elkarrequin minço ciraden,cer leidioten Ieſuſi.
12 Eta guertha cedin egun hetan, ioan baitzedin mendira othoitz eguitera,eta gau gucia *han* iragan ceçan Iaincoari othoitz eguiten ceraucala.
13* Eta arguitu cenean dei citzan bere diſcipuluac,eta hetaric hauta citzan hamabi,cein Apoſtolu-ere dei baitzitzan,

*Berriz 9.1. mat.10.1 marc 3.13. eta 6.7.*

14(Simõ,Pierris-ere deithu çuena, eta Andriu haren anayea:Iacques eta Ioannes: Philippe eta Bartholomeo:
15 Mattheu eta Thomas : Iacques Alpheoren *ſemea*,eta Simon Zelotes deitzen dena,

16 Iudas Iacquesen *anayea*:eta Iudas Iscariot, traidore-ere içan cena)

17 Eta iautsiric hequin, gueldi cedin leku plano batetan, bere discipuluzco companiarequin, eta populu mulço handirequin Iudea gucitic, eta Ierusalemetic, eta Tyrco eta Sidõgo itsas baz terretic, cein ethorri baitziraden hura ençũ leça tençat, eta bere eritassunetaric senda litecençat:

18 Eta spiritu satsuéz tormentatzen ciradenac: eta senda citecen.

19 Eta populu gucia hura hunqui nahiz çabilan:ecen verthute harenganic ilkitẽ cen:eta sendatzen cituen guciac.

*Mat.5.1*

20 * Orduan harc bere beguiac discipuluetarat altchaturic, erraiten çuen, Dohatsu *çarete* paubreác:ceren çuen baita Iaincoaren resumá.

*Esa.65.13.*
*Esa.61.3.7*

21 *Dohatsu *çarete* orain gosse çaretenoc:ceren asseren baitzarete. *Dohatsu *çarete* orain nigarrez çaudetenoc:ceren irri eguinen baituçue.

*Mat.5.11*

22 * Dohatsu içanen çarete, guiçonéc gaitzetsiren çaituztenean, eta iraitziren eta iniuriaturen çaituztenean, eta çuen icena gaichto beçala iraitziren dutenean, guiçonaren Semearen causaz.

23 Aleguera albeitzinteizte egun hartan, eta bozcarioz iauz:ecen huná, çuen saria handi *da* ceruëtan : ecen halaber eguiten cerauecen prophetey hayén aitec.

*Amos 6.1*
*eccle.31.8*

24* Baina malediƈtione çuey abratsoy:ecen baduçue çuen consolationea.

*Esa.65.13.*

25* Malediƈtione çuey betheac çaretenoy: ecẽ

goſſe içanē çarete. Maledictione çuey oraĩ irriz çaudetenoy:ecē auhē eta nigar eguinen duçue.
26 Maledictione çuey, guiçō guciéc onherranen çaituztenean : ecen molde berean eguiten cerauecen propheta falſuey hayén aitéc.
27 * Baina çuey diotſuet dançuçuenoy, Onhets itzaçue çuen etſayac:vngui eguieçue gaitzeſten çaituzteney. *Mat.5.44.*
28 Benedicaitzaçue çuec maradicatzē çaituztenac:eta othoitz eguiçue oldartzē çaizquiçuenacgatic.
29 * Eta mathela batean ioiten auënari, para ieçóc bercea-ere:* eta eure mantoa edequiten drauanari, iacca-ere eztieçoala debeta. *Mat.5.39* *1.Cor.6.7*
30 Eſcatzen çauán guciari emóc, eta eurea edequiten drauanari, ezaquiola *haren* eſca.
13 * Eta nola nahi baituçue eguin dieçaçuē çuey guiçonéc, çuec-ere eguieçue hæy halaber. *Mat.7.12.* *tob.4.16.*
32 * Ecen baldin onheſten badituçue çuec onheſten çaituztenac, cer eſquer duqueçue? ecen vicitze gaichtotacoec-ere bere onheſleac onheſten dituzté. *mat.5.46*
33 Eta baldin vngui badaguieçue çuen vnguiguiley, cer eſquer duqueçue? ecen vicitze gaichtotacoec-ere hura bera eguiten duté.
34 * Eta baldin preſta badieceçue rendaturen drauçuela ſperança duçueney, cer eſquer duqueçue? ecen vicitze gaichtotacoec-ere vicitze gaichtotacoey preſtatzen draue, ordaina recebi deçatençat. *Deu.15.8.* *mat.5.42.*
35 Bada onhets itzacue çuen etſayac, eta vngui

eguieçue:eta presta eçaçue, deus hãdic sperança gabe:eta çuen saria içanen da handi,*eta içanen çarete Subiranoaren seme: ecen hura benigno da ingratetara eta gaichtoetara.

Matt.5.45

36 Çareten beraz misericordioso, çuen Aitaere misericordioso den beçala.

Matt.7.1.

37* Eztecaçuela iudica,eta etzarete iudicaturẽ: eztecaçuela condemna eta etzarete condemna turen:barka eçaçue,eta barkaturen çaiçue.

Mat.7.2 marc.4.24.

38 Emaçue eta emanẽ çaiçue:*neurri ona galkatua,eta higuitua, eta mucurru doana emanen çaiçue çuen golkora:ecen neurtzen duçuen neurri beraz,neurthuren çaiçue çuey-ere aldiz.

39 Halaber erraiten cerauen cõparationebat,

mat.15.14

* Possible da itsuac itsua guida ahal deçan? eztira biac hobira eroriren?

Matth.10.24 ioan.13.16 eta 15.20

40*Ezta discipulua bere magistruaren gaineco: baina nor-ere *içanen baita disciplu* perfect, içanen da magistru beçala.

Mat.7.3.

41* Eta,cergatic dacussac eure anayeren beguico fitsa,eta eure beguico, gapirioari ez atzayo ohartzen?

42 Edo nola ahal derraqueoc eure anayeri, Anayé, vtzi neçac idoqui deçadan hire beguian den fitsa, eurrorrec hire beguian den gapirioa ikusten eztuanean? Hypocritá, idocac lehenic gapirioa eure beguitic:eta orduan ikussiren duc idoqui deçán eure anayeren beguico fitsa.

Mat.7.17

43*Segur ezta arbore ona,fructu gaichtoa egui ten duena: ez eta arbore gaichtoa,fructu ona eguiten duena.

44*Ecen

44 * Ecen arbore gucia fructutic eçagutzen da. Ecen elhorrietaric eztute biltzen ficoric, ezeta ſaparretaric,mendematzen mahatſic.

*Mat.7.16 eta 12.35*

45 Guiçon onac bere bihotzeco theſaur onetic idoquiten du gauça ona: eta guiçon gaichtoac bere bihotzeco theſaur gaichtotic idoquiten du gauça gaichtoa:ecen bihotzeco abundãtiatic haren ahoa minço da.

46* Baina cergatic deitzen nauçue Iauna, Iauna:eta ez eguiten,*nic* erraiten ditudanac?

*Mat.7.11 rom.2.13. iac.1.22.*

47 Enegana ethorten den gucia,eta ene hitzac ençuten eta hec eguiten dituena: eracutſiren drauçuet nor irudi den.

48 Irudi du etchebat edificatzen duen guiçona, ceinec aitzurtu eta barna irequi baitu,eta eçarri fundamenta arroca baten gainean: eta ſoberná ethorriric, fluuioac ereçarri vkan drauca etche hari, eta ecin higuitu du: ecen arroca gainean fundatua cen.

49 Baina ençun vkan dituenac,eta ez eguin, irudi du fundament gabe bere etchea lur gaineã edificatu duen guiçona:ceini ereçarri baitrauca fluuioac, eta bertan erori içan da, eta etche haren deſeguitea handi içan da.

CAP. VII.

*2 Centeneraren cerbitzariaz, 9 eta fedeaz. 11 Alhargunaren ſemea reſuſcitatu. 16 Chriſt Propheta. 19 Ioanneſec Ieſuſgana igorten. 22 Paubrey,Euãgelioa çaye predicatzen. 23 Chriſtean ſcandalizaturen eztena dohatſu. 29 Iaincoaren iuſtificatzea. 32 Merkatuco haour iarriric daudenez. 36 Chriſtec-*

*Phariseuarequin iaten. 37 Emazte bekatoressa. 41 Bi çordunac. 47 Onheriztea. 48 Bekatuén barkamendua. 50 Sinhestea.*

*Mat.8.5.* 1* ETa acabatu cituenean bere hitz guciac populuac çāçuela, sar cedin Capernaumen.

2 Eta Centener baten cerbitzaria eri içanez hiltzera çohian, cein baitzuen guciz maite.

3 Eta harc ençun çuenean Iesusez, igor citzan harengana Iuduén Ancianoac, othoiztez çayola, ethorriric senda leçan haren cerbitzaria.

4 Eta hec ethorri ciradeneā Iesusgana, othoitz ceguioten affectionatuqui, cioitela, ecen digne cela nehorc hura aithor lieçón.

5 Ecen maite dic, *cioiten*, gure nationea eta synagogabat harc edificatu diraucuc.

6 Iesus bada ioan cedin hequī. Baina ia etchetic vrrun handi etzela, Centenerac igor citzan adisquideac harengana, ciotsala, Iauna, ezadila neka: ecen eznauc digne ene atharbe pean sar adin.

7 Halacotz neure buruä-ere eztiat digne estimatu hiregana ethorteco: baina errac hitza, eta sendaturen baita ene muthilla.

8 Ecen ni nauc *berceren* meneco guiçon, ditudalaric neure meneco gendarmesac: eta huni erraiten diarocat, oha, eta badihoac: eta berceari, Athor, eta ethorten duc: eta neure cerbitzariari Eguic haur, eta eguiten dic.

9 Eta gauça hauc ençunic Iesusec mirets ceçā

harçaz:eta itzuliric erran cieçon berari çarreican companiari, Erraiten drauçuet, Iſraelen-ere eztudala hain fede handiric eriden.
10 Eta igorri içan ciradenéc, etchera itzuli ciradenean, eriden ceçaten cerbitzari eri içana ſendoric.
11 Eta guertha cedin biharamunean Ieſus ioaiten baitzen Naim deitzen cen hirira: eta ioaiten ciraden harequin haren diſcipuluetaric vnguiſco, eta gendetze handia.
12 Eta hirico portaleari hurbildu çayon beçala, huná, eramaiten çuten hilbat, bere ama alhargunaren ſeme bakoitza, eta hiritic compania handia cen harequin.
13 Eta *alhargun* hura ikuſſi çuenean Iaunac, compaſſioné har ceçan haren gainean, eta erran cieçon, Eztaguinala nigarric.
14 Eta hurbilduric hunqui ceçan kutchá, (orduan gorputza çaramatenac gueldi citecen) eta errá ceçan, Guiçõ gazteá, hiri dioſſat, iaiqui adi.
15 Eta iar cedin hil içana, eta has cedin minçatzen. Eta eman cieçon hura bere amari.
16 Eta har citzan guciac beldur batec, eta glorificatzen çuten Iaincoa, erraiten çutela, Segur Propheta handibat iaiqui içan da gure artean, eta ſegur Iaincoac viſitatu du bere populua.
17 Eta io ceçan harçazco fama hunec Iudea gucia eta inguruco comarca gucia.
18* Eta conta cietzoten Ioanneſi bere diſcipuluec gauça hauc guciac. *Mat.11.2*
19 Eta deithuric bere diſcipuluetaric biga Io-

annesec igor citzā Iesusgana, cioela, Hi aiz ethorteco cen hura, ala berce baten beguira gaude?

20 Eta ethorriric harengana guiçon hec erran ceçaten, Ioannes Baptistac igorri guiaitic hiregana, dioela, Hi aiz ethorteco cena, ala berce baten beguira gaude?

21 Eta ordu berean anhitz senda ceçā eritassunetaric, eta plaguetaric, eta spiritu gaichtoetaric eta anhitz itsuri ikustea eman ciecén.

22 Guero ihardesten çuela Iesusec errā ciecén, Ioannic conta ietzoçue Ioannesi ikussi eta ençun dituçuen gauçác: ecen itsuéc ikustea dutela recebitzē, mainguäc diradela ebilten, sorhayóac diradela chahutzen gorréc dutela ençuten, hilac diradela resuscitatzen, paubrey çayela Euangelioa predicatzen.

23 Eta dohatsu da scandalizaturen eztena nitā.

24 Eta partitu ciradenean Ioannesen mandatariac, has cequión, Ioannesez populuari erraiten, Ceren ikustera ilki içan çarete desertura? canabera haiceaz erabilten den baten?

25 Baina ceren ikustera ilki içan çarete? guiçō abillamendu preciosoz veztitu baten? huná, abillamendu preciosoetan, eta delicioetan diradenac, reguén palacioetan dirade.

26 Baina ceren ikustera ilki içan çarete? Propheta baten? bay diotsuet eta Propheta bainoagoaren.

*Mal.3.1.*

27 Haur da ceinez scribatua baita, * Huná, nic igorten diat neure mandataria hire beguitharte aitzinean, ceinec hire bidea appainduren baitu

hire aitzinean.

28 Ecen erraiten drauçuet, emaztetaric iayó diradenén artean eztela Prophetaric batre Ioãnes Baptista baino handiagoriç: badaric-ere Iaincoaren resumán chipién dena hura baino hãdiago da.

29 Orduan populu guciac *hori* ençunic eta publicanoéc iustifica ceçaten Iaincoa, batheyatu içanic Ioannesen baptismoaz.

30 Baina Phariseu eta Legueco doctor harenganic batheyatu etziradenéc Iaincoarẽ conseillua arbuya ceçaten bere buruén contra.

31* Orduan erran ceçan Iaunac, Norequin bada comparaturen ditut generatione hunetaco guiçonac? eta cer irudi dute? *Mat.11.16*

32 Merkatuan iarriric dauden, eta bata bercéari oihuz dagozcan haourtchoac beçalaco dirade ceinéc baitioite, Chirula soinu eguin drauçuegu, eta etzarete dançatu: ere ssiz cãtatu drauçuegu eta eztuçue nigarric eguin.

33 Ecen ethorri da Ioannes Baptista, oguiric iaten eztuela, ez mahatsarnoric edaten, eta dioçue, Deabrua du.

34 Ethorri da guiçonaren Semea iaten eta edaten duela: eta dioçue, Huná guiçon gormanta eta hordia, eta publicanoén eta vicitze gaichtotacoen adisquidea.

35 Baina iustificatu içan da sapientiá bere haour guciéz.

36 Eta othoitz eguin cieçon Phariseu batec ha requin ian leçan, eta sarthuric Phariseuaren et-

çhean,iar cedin mahainean.

37 Eta huná,hirian emazte vicitze gaichtotaco cen-batec iaquin çuenean, ecen hura Phariſeuaren etchean mahainean iarria cela, ekar ceçan boeitabat vnguentu,

38 Eta guibeletic haren oinetara cegoela, has cedin nigarrez cegoela haren oinén nigar vriz arregatzen: eta ichucatzen cerauzcan bere buruco adatſaz, eta pot eguiten cerauen haren oiney,eta vnguentuz vnguenſtatzen cituen.

39 Orduan *hori* ikuſſiric hura gomitatu çuen Phariſeuac erran ceçan bere baithan,cioela,Hunec,baldĩ Propheta baliz balaquique ſegur nor eta nolacoa den haur hunquitzẽ duen emaztea: ecen vicitze gaichtotacoa da.

40 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran cieçón, Simon,badiat cerbait hiri erraitecoric.Eta harc dio,Magiſtruá,errac.

41 Hartzedun batec citián bi çordun,batac cián çor borz-ehun dinero, eta berceac berroguey eta hamar.

42 Eta hec ez vkanez nondic paga, quitta cieceán biey.Hautaric bada,errac, ceinec hura mai teago vkanen du?

43 Eta ihardeſten çuela Simonec erran ceçan, Vſte diat ecen guehiago quittatu içan çayonac. Eta harc erran cieçon,Bidezqui iugeatu duc.

44 Eta emazteaganat itzuliric erran cieçón Simoni,Badacuſſac emazte haur? hire etchean ſar thu içan nauc,vric ene oinetara eztuc eman:baina hunec ene oinac nigar vriz arregatu citic,eta

bere buruco adatſaz ichucatu.

45 Potbat niri eztrautac eman, baina haur, ſarthu naicenaz gueroztic, eztuc ene oiney pot eguitetic gueldiṫu.

46 Olioz ene buruä eztuc vnctatu: baina huneç vnguentuz vnctatu citic ene oinaç.

47 Halacotz erraiten drauat barkatu çaizcala bere bekatu anhitzac, ecen haguitz onhetſi diç: eta gutiago barkatzen çayonac gutiago onheſten diç.

48 Guero emazteari erran cieçón, Barkatu çaizquin eure bekatuac.

49 Eta has citecen elkarrequin mahainean iarriric ceudenac, bere artean erraitẽ, Nor da haur bekatuac-ere barkatzen baititu?

50 Baina emazteari erran cieçón, Eure fedeac ſaluatu au: oha baquerequin.

CAP. VIII.

1 *Chriſtec predicatzen.* 3 *Emaztéc Chriſti cerbitzu eguiten.* 5, 11 *Ereillearen comparationea.* 10 *Iaincoaren reſumaco ſecretuén eçagutzea.* 13 *Tentationéz* 14 *Anſiéz. Abraſtaſſunéz. Voluptatéz.* 16 *Lampá.* 21 *Chriſten ama eta anayeac.* 24 *Chriſtec haiceac mehatchatzen.* 27 *Demoniatua ſendatzen.* 37 *Gadarenoéc Chriſt arbuyatzen.* 41 *Iairuſen alabá.* 43 *Emazte odol iariatzez eri cena ſendatu.* 48 *Fedeac emparatzen.* 50 *Chriſt ſinheſtearen galdez egon.* 52 *Hilagatic nigarrez. Lo datzala Chriſtec erraiten.*

1 ETa guero guertha cedin hura ioaiten baitzen hiriz hiri, eta burguz burgu,predicatzen eta euangelizatzen çuela Iaincoaren resumá eta hamabiac *ciraden* harequin:

2 Eta emazte batzu harçaz spiritu gaichtoetaric,eta eritassunetaric sendatuac, Maria deitzen cena Magdalena,* ceinaganic çazpi deabru ilki içen baitziraden,

Marc 16.9

3 Eta Ioãna Herodesen procuradore. Chuz *deitzen cenaren* emaztea, eta Susanna,eta berceric anhitz bere onetaric hura aiutatzen çutenic.

Mat,13.3

4 * Eta nola gendetze handia biltzen baitzen, eta hiri gucietaric anhitz harengana ioaiten, erran ceçan comparationez,

5 Ilki cedin ereillebat bere haciaren ereitera:eta ereitean partebat eror cedin bide bazterrera: eta aurizqui içá cen,eta ceruco choriéc irets ceçaten hura.

6 Eta berce *partebat* eror cedin harri gainera, eta sorthuric eyhar cedin, ceren ezpaitzuen hecetassunic:

7 Eta berce *partebat* eror cedin elhorri artera: eta harequin batean sorthuric elhorriéc itho ceçaten hura.

8 Eta bercea eror cedin lur onera:eta sorthuric eguin ceçan fructu ehunetan hambat. Hauén erraitean oihuz cegoen,Ençuteco beharriric duenac, ençun beça.

9 Eta interrogatzẽ çutẽ bere discipuluéc errai

ten çutela,ceric cen comparatione hura.

10 Eta harc erran ciecén, Çuey eman çaiçue Iaincoaré resumaco mysterioén eçagutzea: baina bercey comparationez, *dacussatelaric ikus ezteçaten,eta dançutelaric adi ezteçaten.

Esa.6. 9 mat.13.14 marc 4.12. ioan 12.40 act.28.26. rom.11.8.

11 *Haur da bada comparationea, Hacia da Iaincoaren hitza.

Mat.13.18 marc 4.15.

12 Eta bide bazterrecoac dirade, ençuten dutenac:guero ethorten da deabrua,eta kencen du hitza hayén bihotzetic, sinhetsiric salua eztitecençát.

13 Eta harri gainecoac dirade,ençun dutenean bozcariorequin recebitzen dutenac hitza:baina hauc erroric eztute, hauc demboratacotz sinhesten duté, eta tentationeco demborán retiratzen dirade.

14 Eta elhorri artera erori dena, hauc dirade ençun dutenac: baina partitu eta, ansiéz eta abrastassunéz eta vicitze *hunetaco* voluptatéz ithotzen dirade,eta eztuté fructuric ekarten.

15 Baina lur onera *erori* dena, hauc dirade bihotz honesteã eta onean hitz ençuna eduquité dutenac,eta fructu patientiatã ekarten dutenac

16 *Eta nehorc arguia viztu duenean,eztu hura vnci batez estaltzen,edo ohe azpian eçarten: baina candeler gainean eçarten du,sartzen diradenéc arguia ikus deçatençát.

Matt.5.15 marc 4.21.

17 *Ecen ezta secreturic, aguerturen eztenic: ez estaliric, eçaguturen, eta arguira ethorriren eztenic.

Matth.10. 26. marc 4.22. berriz 12.2

18 Ikus-açue bada nola ençuten duçuen:*ecen

*Matth.13.12. eta 25.29. marc 4.25. aberr. 19.26* norc-ere baitu hari emanẽ çayo:eta norc-ere ezpaitu, duela vſtę duena-ere edequiren çayo hari.

*Matth. 12.46. marc 3.31.* 19 *Orduan ethor citecen harengana haren ama eta haren anayeac, eta gendetzearen cauſaz ecin hers cęquidizquion.

20 Eta declara cequión, erraiten ceraucatela, Hire ama, eta hire anayeac lekorean diaudec, hi ikuſſi naiz.

21 Baina harc ihardeſten çuela erran ciecén, Ene ama eta ene anaye dirade Iaincoaren hitza ençuten eta eguiten dutenac.

*Matt.8.23 marc 4.36.* 22 *Eta guertha cedin egun batez, hura ſar baitzedin vncian eta haren diſcipuluac: eta erran ciecén, Iragan gaitecen lacaren berce aldera. Eta parti citecen.

23 Eta vncian hec ioaiten ciradela, loac har ceçan: eta iauts cedin haicezco tormentabat lacera: eta *vrez* bethatzen ciraden, eta peril çutén.

24 Orduan hurbilduric iratzar ceçaten hura, cioitela, Magiſtruá, Magiſtruá, galdu guihoaçac. Eta harc iratzarriric mehatcha citzan haicea eta vraren tempeſtá: eta ceſſa citecen, eta ſoſſagu handia eguin cedin.

25 Eta erran ciecén, Non da çuen fedea? Hec icituric ceudela mirets ceçaten, cioitela elkarren artean, Baina nor da haur, haiceac eta vra manatzen baititu eta obeditzen baitute?

*Matt.8.28 marc 5.1.* 26 *Guero tira ceçaten Gadarenoen comarcarát, cein baita Galilearen aurkaz aurk.

27 Bada hari lurrera ilki eta, bat cequión hiri hartaco guiçon dembora lucez gueroz deabrua

çuen-bat:eta abillamenduz etzén veztitzen,eta etchetan etzen egoiten,baina thumbetan.
28 Eta *harc* ikuſſi çuenean Ieſus, heyagoraz cegoela, egotz ceçan bere buruä haren aitzinera, eta ocengui erran ceçan, Cer da hire eta ene artean,Ieſus Iainco ſubiranoarē Semeá?othoitz eguiten drauat,ezneçála,tormenta.
29 Ecen manatzen çuen ſpiritu ſatſua guiçonaganic ilki ledin: ecen dēbora lucez eduqui çuen hura: eta eſtecaturic cadenaz eta cepoez beguiratzen cen:baina eſtecailluac çathituric eramaiten cen deabruaz deſertuetara.
30 Orduan interroga ceçan hura Ieſuſec,cioela, Nola duc icen? Eta harc erran ceçan, Legione. Ecen anhitz deabru ſarthu ciraden hura baithan.
31 Eta othoitz eguiten ceraucaten, ezlitzan mana abyſmora ioaitera.
32 Eta cen han vrdalde handibat alha cenic mendian: eta othoitz eguiten ceraucaten permetti liecén hetara ſartzera: eta permetti ciecén.
33 Ilkiric bada deabruac guiçónaganic ſar citecen vrdetara:eta vrdaldea oldar cedin gainetic behera lac-era,eta itho cedin.
34 Eta vrdainéc ikuſſi çutenean cer eguin içan cen, ihes eguin ceçaten: eta partituric conta ceçaten hirian eta campoetan.
35 Orduan *gendeac* ilki citecen eguin içan cenaren ikuſtera, eta ethor citecen Ieſuſgana, eta eriden ceçaten guiçona ceinetaric deabruac ilki

içan baitziraden, veztitua, eta cençatua, iarriric cegoela Iesusen oinetara: eta ici citecen.

36 Eta conta ciecen hæy ikussi vkan çutenec-ere, nola sendatu içan cen demoniatu içana.

37 Orduan othoitz eguin cieçoten Gadarenoén aldiri inguruco gendetze guciac, parti ledin hetaric: ecen icidura handic hartu cituen: eta hura vncira sarthuric, itzul cedin.

38 Eta othoitz ceguión guiçō harc, ceinaganic ilki içan baitziraden deabruac, harequin licén: baina Iesusec igor ceçan, cioela,

39 Itzul adi eure etchera, eta conta eçac cein gauça handiac eguin drauzquián Iaincoac. Ioan cedin bada hiri gucitic predicatzen cituela Iesusec eguin cerauzcan gauça guciac:

40 Eta guertha cedin itzuli cenean Iesus, recebi baitzeçan gendetzeac: ecen guciac haren beguira ceuden.

*Matt.9.18*
*marc 5.22.*

41 *Orduan huná, ethor cedin Iairus deitzen cen guiçombat, eta hura cen synagogaco principal: eta egotzi çuenean bere buruä Iesusen oinetara, othoitz eguin cieçon sar ledin haren etchera:

42 Ecen alaba bakoitzbat çuen hamabi vrtherē ingurucoa, eta hura çohian hiltzera. Eta ioaitean gendetzeac hertsen çuen.

43 Eta hamabi vrthez gueroztic odola baratzen etzayon, eta medicuetan bere sustantia gucia despendatu çuen, eta batez-ere ecin sendatu içan cen emaztebatec,

44 Hurbilduric guibeletic hunqui ceçan haren

arropa ezpaina eta bertan gueldi cedin haren odol iariatzea.

45 Orduan dio Ieſuſec, Nor *da* ni hunqui nauena? Eta guciéc vkatzen çutenaren gainean, erran ceçan Pierriſec, eta harequin ciradenéc, Magiſtruá, gendetzéc hertſen eta aurizquiten aute, eta dioc, Nor *da* ni hunqui nauena?

46 Baina Ieſuſec dio, Norbaitec hunqui nau ecen eçagutu dut verthute eneganic ilki içã dela.

47 Emazte hura bada ikuſſiric ecen etzayola eſtali içan, ethor cedin ikara çabilala: eta bere buruä haren aitzinera egotziric declara cieçón populu guciaren aitzinean cer cauſaz hura hunqui çuen, eta nola ſendatu içan cen bertan.

48 Eta harc erran cieçón, Alabá aun bihotz on eure fedeac ſendatu au: oha baquerequin.

49 Oraino hura minço cela, ethor cedin cembeit ſynagogaco principalarenetic, hari ciotſala, Hil içan duc hire alabá: ezteçala fatiga Magiſtrua.

50 Baina Ieſuſec ençunic ihardets cieçón neſcatcharen aitári. Ezaicela beldur, ſinhets eçac ſolament, eta hura ſendaturen baita.

51 Eta etchera ſarthuric, etzeçan nehor ſartzera vtzi Pierris eta Iacques eta Ioannes eta neſcatcharen aita eta ama baicen,

52 Eta nigarrez ceuden guciac, eta lamẽtatzen çutén: baina harc erran ceçan, Eztaguiçuela nigarric: ezta hil, baina lo datza.

53 Eta truffatzen ciraden harçaz, hil cela iaquinez.

54 Eta harc, guciac campora iraitziric, eta haren eſcua harturic, oihu eguin ceçá, cioela, Neſcatchá, iaiqui adi.

55 Eta itzul cedin haren ſpiritua, eta iaiqui cedin bertan: eta mana ceçan emá lequión iatera.

56 Eta ſpanta citecen haren aita-amác: baina harc mana citzan nehori ezlerroten eguin içan cena.

CAP. IX.

*1 Apoſtoluac predicatzera igorri. 7, 18 Nehorc Chriſtez duen opinionea. 12 Borz oguiezco miraculua. 20 Apoſtoluén aithorra. 23 Norc bere buruäz renuntiatzeco. 26 Chriſtez ahalque içatea. 28 Haren transfigurationea. 35 Chriſti behatzeco. 42 Lunaticoa ſendatu. 44 Bere paſſionea Chriſtec aitzinetic erraiten. 46 Cein guehien içanen licén Apoſtoluéc ihardüqui. 53 Samaritanoec Chriſt ez recebitzen. 55 Mendequioa. 56 Chriſtec ſaluatzen. 61 Eſcua goldean.*

*Matt.10.1 marc 3.13, eta 6.7.*

1 *GVero deithuric elkarrequin bere hamabi diſcipuluac, eman ciecén bothere eta authoritate deabru gucién gainean, eta eritaſſunén ſendatzeco.

*Matt.10.7*

2 *Eta igor citzan hec Iaincoaren reſumaren predicatzera, eta erién ſendatzera.

*Matt 10.9 marc 6.8.*

3 *Eta erran ciecén, Ezteçaçuela deus eraman bidecotzát, ez vheric, ez maletaric, ez oguiric, ez diruric, eta eztuçuela birá arropa.

4 Eta cein-ere etchetan ſarthuren baitzarete, han çaudete, eta handic ilki albaitzindezte.

5 *Eta norc-ere recebituren ezpaitzaituzte, ilkiric hiri hartaric, çuen oinetaco errhautsa-ere iharros eçaçue testimoniagetan hayén contra.

Berr.10.11 mat.10.14 marc 6.11. act.13.51.

6 *Hec* bada ilkiric ioaiten ciraden burguz burgu, euangelizatzen eta sendatzen çutela leku gucietan.

7 *Eta ençun citzan Herodes tetrarchac, harc eguiten cituen gauça guciac: eta dudatzé çuen, ceren batzuc erraiten baitzutén, ecen Ioannes hiletaric resuscitatu cela.

Mat.14.1. marc 6.14.

8 Eta batzuc Elias aguertu cela: eta bercéc, cébeit lehenagoco Prophetaric resuscitatu cela.

9 Orduan dio Herodesec, Ioannesi nic buruä edequi draucat: nor da bada haur, ceinez nic baitançuzquit hunelaco gauçac? Eta hura ikussi nahiz çabilan.

10 *Eta itzuliric Apostoluéc conta cietzoten Iesusi, eguin cituzté gauça guciac.* Orduan hec harturic retira cedin *Iesus* appart. Bethsaida deitzen den hirico leku desertu batetara.

Marc 6.30 Matth.14.13. marc 6.35.

11 Eta gendetzeac *hori* iaquinic, iarreiqui çaizcan, eta recebitu cituenean, minçatzen çayen Iaincoaren resumáz: eta sendatu behar çutenac, sendatzen cituen.

12 *Eta eguna has cedin beheratzen: eta hurbilduric hamabiéc erran cieçoten, Eyéc congit gendetzey, ioanic inguruco burguëtara eta parropioetara, retira ditecen, eta eriden deçaten iateco, ecen hemen leku desertuan gaituc.

Matth.14.15. marc 6.35. ioan 6.5.

13 Baina erran ciecén, Eyeçue çuec iatera. Eta hec erran ceçaten, Eztitiagu borz ogui eta bi

arrain baino guehiago:Baldin guc ioanic populu hunen guciaren eros ezpadeçagu iateco.

14 Ecen baciraden borz milla guiçonetarano. Orduan dioste bere discipuluey, Iar eraci itzaçue mahaindaraz berroguey eta hamarná.

15 Eta hala eguin ceçaté,eta iar citecen guciac.

16 Orduan harturic borz oguiac eta bi arrainac, cerurat beha cegoela benedica citzan hec: eta hauts citzan, eta eman cietzén discipuluey, populuaren aitzinean eçar litzatençát.

17 Ian ceçaten bada guciéc,eta ressasia citecen: eta goititu içan dirade soberatu içan çaizten çathietaric hamabi sasquitara.

*Mat.16.13 marc 8.27.*

18 *Eta guertha cedin, hura appart othoitz eguiten cegoela, discipuluac harequin baitziraden eta interroga baitzitzan hec,cioela, Ni nor naicela dioite gendec?

19 Eta hec ihardesten çutela erran ceçaten, Ioannes Baptista : eta bercéc, Elias: eta bercéc, ecen cembeit Propheta lehenagocoetaric resuscitatu içan dela.

20 Eta erran ciecén, Eta çuec nor naicela ni dioçue?Ihardesten çuela Simon Pierrisec erran ceçan,Christ Iaincoarena.

21 Orduan harc mehatchatzen cituelaric mana citzan nehori haur ezlerroten:

*Matth.17. 22. marc 8.31.*

22 Cioela, * Behar da guiçonaren Semeac anhitz suffri deçan, eta reproba dadin Ancianoéz eta Sacrificadore principaléz, eta Scribez, eta hil dadin,eta hereneco egunean resuscita dadin.

*Ber.14. 27 mat. 10.38 eta 16.24. marc 8.34.*

23 *Guero erraiten cerauen guciey.Baldin nehor

hor ene ondoan ethorri nahi bada, renuntia beça bere buruaz, eta har beça bere crutzea egun oroz, eta berrait niri.

24 *Ecen norc-ere nahi vkanen baitu ſaluatu bere vicia: galduren du hura: baina norc-ere galduren baitu bere vicia ene cauſaz, ſaluaturen du hura.

*Ber. 17.33 mat. 10.39 eta 16.25. marc 8.35. ioan 12.25*

25 *Ecen cer probetchu du guiçonac baldin mundu gucia irabaz badeça, eta bere buruä deſtrüi deçan, eta gal dadin?

*Matth. 16. 26. marc 8.36.*

26 *Ecen nor-ere ahalque içanen baita niçaz eta ene hitzéz, harçaz ahalque içanen da guiçonaren Semea, dathorrenean bere maieſtatean, eta Aitarenean eta Aingueru ſaindueneạn.

*Berr. 12.9. mat. 10.33 marc 8. 38 2. tim. 2.12*

27 *Eta erraiten drauçuet eguiaz, badirade hemen preſent diradenotaric batzu, herioa daſtaturen eztutenic Iaincoaren reſumá ikus deçaqueteno.

*Matth. 16. 28. marc 9.1.*

28 *Eta guertha cedin, hitz hauçaz güeroztic quaſi çortzi egunẽ buruän, har baitzitzan Pierris eta Ioannes eta Iacques, eta igan baitzedin mendi batetara othoitz egüitera.

*Matt. 17.1 marc 9.2*

29 Eta othoitz eguiten cegoela, haren beguitharteco formá mutha cedin, eta haren abillamendua churit eta chiſt-miſta beçain arguit.

30 Eta huná, bi guiçon minço ciraden harequin, cein baitziraden Moyſes eta Elias:

31 Hauc aguerturic gloriarequin, erraiten çutén, harc Ieruſalemen complitzeco çuen fina.

32 Eta Pierris, eta harequin ciradenac, ciraden logalez cargatuac: eta iratzartu ciradenean, ikus

ceçaten haren maieſtatea, eta harequin ceuden bi guiçonac.

33 Eta guertha cedin, hec partitu ciradenean harenganic: Pierriſec erran baitzieçón Ieſuſi, Magiſtruá, on duc gu hemen garen, eguin ditzagun bada hirur tabernacle, bat hire, eta bat Moyſeſen, eta bat Eliaſen: Etzaquiala cer minço cen.

34 Eta harc gauça hauc erraiten cituela, eguin cedin hodeybat, eta eſtal citzan hec: eta ici citecen hodeyean ſartzen ciradenean.

35 Orduã vozbat eguin cedin hodeyetic, cioela, Haur da ene Seme maitea, huni beha çaquizquiote.

36 Eta voz hura eguiten cela, eriden cedin Ieſus bera: eta hec ichilic egon citecen, eta egun hetan etzieçoten nehori deus erran ikuſſi cituzten gaucetaric.

*Matth.17.14.* *marc 9.17.*

37 *Eta guertha cedin ondoco egunean, hec menditic iautſi ciradenean, gendetze handibat encontrura ilki baitzequion hari.

38 Eta huná, compainiaco guiçombat oihuz iar cedin, cioela, Magiſtruá, othoitz eguiten drauat beha-eçac ene ſemeaganát: ecen haur bera baicen eztiat.

39 Eta huná, ſpirituac hartzen dic, eta bertan heyagoraz iarten duc, eta çathicatzen dic haguna dariola, eta huneganic nequez partitzen duc, haur hauſten duela.

40 Eta othoitz eguin diraueat hire diſcipuluey, egotz leçaten hura cãpora: baina ecin eguin dié.

41 Eta ihardeſten duela Ieſuſec dio, O natione incredula eta gaichtoá, noizdrano ſinean çuequin içanen naiz eta ſupportaturen çaituztet? Ekarrac huna eure ſemea.

42 Eta oraino hurbiltzen cela hauts ceçan hura deabruac eta çathica:eta mehatcha ceçan Ieſuſec ſpiritu ſatſua, eta ſenda ceçan haourra, eta renda cieçón bere aitari.

43 Eta ſpanta citecen guciac Iaincoaren verthute gucizco handiaren gainean. Eta guciac miraculuz ceudela,eguiten cituen gauça gucién gainean,erran ciecén bere diſcipuluey,

44 *Eçar itzaçue çuec hitz hauc çuen beharrietan: ecen içanen da guiçonaren Semea liuraturen baita guiçonén eſcuetara.

*Matth.17. 22. marc 9.31.*

45 Baina hec hitz haur etzuten aditzen,eta hetaric eſtalia cen, *hala* non ezpaitzutén hura ſenditzen:eta beldur ciraden haren interrogatzera hitz huneçaz.

46 *Guero ſar citecen elkarrequin diſpután, eya hetaric cein cen handiena.

*Matt.18.1, marc 9.33*

47 Eta Ieſuſec hayén bihotzeco penſamendua ikuſsi çuenean, haourtchobat harturic eçar ceçan bere aldean:

48 Eta erran ciecén,Norc-ere recebituren baitu haourtcho haur ene icenean, ni recebitzen nau:eta norc-ere ni recebituren bainau,ni igorri nauena recebitzen du: ecen nor baita chipiena çuen gucion artean,hura içanen da handi.

49 *Eta ihardeſten çuela Ioanneſec erran ceçan, Magiſtruá, ikuſſi diagu norbeit hire ice-

*Marc 9.38*

nean deabruac campora egoizten cituenic: eta debetatu diagu hura, ceren ezpaitarreic gurequin hiri.

50 Orduan erran cieçón Iesusec, Ezteçaçuela debeta, ecen gure contra eztena gure alde da.

51 Eta guertha cedin, haren goiti altchatzeco egunac complitzen ciradenean, orduan chuchent baitzeçan bere beguithartea *gogo eguinic* Ierusalemera ioaitera.

52 Eta igor citzan mandatariac bere aitzinean, eta ioanic sar citecen Samaritanoén burgu batetan, *ostatu* appain lieçotençát:

53 Baina etzeçaten recebi, ceren haren beguithartea baitzén Ierusalemerat ioiten cenarena.

54 Eta *hori* ikussiric haren discipulu Iacquesec eta Ioannesec erran ceçaten, Iauna, nahi duc derragun sua iauts dadin cerutic, eta deseguin ditzan, *Eliasec-ere eguin çuen beçala?

2.*Reg*.8.12

55 Baina itzuliric *Iesusec* mehatcha citzan hec, cioela, Eztaquiçue cer spiritutaco çareten.

56 Ecen guiçonaren Semea ezta ethorri guiçonén vicién galtzera, baina saluatzera. Eta ioan citecen berce burgu batetara.

*Mat*.8.19.

57 *Guero guertha cedin, hec bideaz ioaiten ciradela, erran baitzieçón norbeitec, Iauna, iarreiquiren natzaic norat-ere ioanen baitaiz.

58 Eta Iesusec erran cieçon. Aceriéc çulhoac citié, eta ceruco choriéc ohatzeac: baina guiçonaren Semeac eztic non bere buruä paussa deçan.

*Matt*.8.21

59 *Baina erran cieçón berce bati, Arreit niri.

Eta harc erran ceçan, Iauna, permetti ieçadac behin ioan nadin neure aitaren ohorztera.
60 Eta erran cieçón Iesusec, Vtzitzac, hilac bere hilén ohorztera: baina hi habil eta denuntia eçac Iaincoaren resumá.
61 Orduan erran ceçan berce batec-ere, Iauna, Iarreiquiren natzaic hiri: baina permetti ieçadac behin etchecoetaric congit har deçadan.
62 Eta erran cieçón Iesusec, Eztuc nehor bere escua goldean eçarten eta guibelerat behatzen duenic propio denic Iainçoaren resumacotzat.

## CAP. X.

1 *Iesusec hiruroguey eta hamar discipulu ordenatzen eta igorten.* 2 *Vzta handi, languile guti.* 11 *Erhautsaren oinetaric eragoiztea.* 16 *Apostoluac ençuteco.* 20 *Icen ceruëtan scribatuac.* 21 *Chipiey Euangelioa manifestatu.* 27 *Iaincoaren eta hurcoaren onhestea.* 29 *Gure hurcoa cein.* 30 *Guiçon çauriaz.* 37 *Misericordia.* 38 *Marthac Christ recebitzen.*

1 GAuça hauen ondoan ordena citzan Iaunac berce hiruroguey eta hamar-ere, eta igor citzan hec birá bere beguitharte aitzinean, bera ethorteco cen hiri eta leku gucietara.
2 Eta erraiten cerauen, * Vztá handi da, baina languile guti: othoitz eguioçue bada vzta Iabeari, irion ditzan languileac bere vztara. *Mat. 9.37*
3 * Çoazte, huná nic igorten çaituztet çuec bil- *Matth. 10. 16.*

dotſac otſoén artera beçala.

4 Eztramaçuela ez mulſaric, ez maletaric, ez çapataric: *eta nehor bidean ezteçaçuela ſaluta.

2.Reg.4. 29.

5 *Cein-ere etchetan ſarthuren baitzarete, lehenic erraçue, Baquea *dela* etche hunetan.

Mat.10.11 marc 6.10.

6 Eta baldin han baquezco ſemeric batre bada, pauſſaturen da çuen baquea haren gainean: ezpere çuetara itzuliren da.

7 Eta etche hartan berean çaudete, iaten eta edaten duçuela aitzinera emanen çaiçuenetic: *ecen languilea bere ſariaré digne da. Etzaitezte la iragan etchetic etchera.

Deut.24. 14. mat.10.10 1.tim.5.18

8 *Baina are cein-ere hiritan ſarthuren baitzarete, eta recebituren baitzaituzte, ian eçaçue aitzinera eçarten çaizquiçuenetaric:

Mat.10.11

9 Eta ſendaitzaçue hartan diraten eriac, eta erreçue, Hurbildu da çuetara Iaincoaren reſumá.

10 Baina cein-ere hiritan ſarthuren baitzarete, eta ezpaitzaituzte recebituren, ilkiric hango carriquetara, erraçue,

11 *Çuen hiritic lothu çaicun errhautſa-ere iharroſten dugu çuen cõtra: guciagatic-ere haur iaquiçue, ecen hurbildu dela çuetara Iaincoaren reſumá.

Leben.9.5. act.13.51. eta 18.6.

12 Baina badiotſuet ecen Sodomacoac egun hartan hiri hura baino emequiago tractatuac içanen diradela.

13 *Malediction hiri Chorazin, maledictione hiri Bethſaida, ecen baldin Tyren eta Sidonen eguin içan balirade çuec baithan eguin içan diradé verthuteac, aſpaldi çacurequin eta haut-

Mat.11.21

ſequin iarriric emendatu ciratequeen.
14 Halacotz Tyr eta Sidon emequiago tractatuac içanen dirade iudicioan ecen ez çuec.
15 Eta hi Capernaum cerurano altchatu içan aicena, iffernurano beheraturen aiz.
16 *Çuec ençuten çaituztenac, ni ençuten nau: eta çuec iraizten çaituztenac, ni iraizten nau: eta ni iraizten nauenac, ni igorri nauena iraizten du.

*Matth.* 10. 40. *ioan* 13.20

17 Eta itzuli içan dirade hiruroguey eta hamarrac bozcariorequin, cioitela, Iauna, deabruac-ere ſuiet eguitẽ ciaizquiguç hire icenean:
18 Eta erran ciecén, Ikuſten nuen Satan chiſtmiſta beçala cerutic erorten.
19 Huná, badrauçuet bothere ſuguén eta ſcorpionén gainean ebilteco, eta etſayaren puiſſança guciaren gainean: eta deuſſec eztrauçue calteric eguinen.
20 Ordea harçaz etzaiteztela aleguera, ceren ſpirituac ſuiet eguiten çaizquiçuen: baina aitzitic aleguera çaitezte, ceren çuen icenac ſcribatuac baitirade ceruëtan.
21 *Ordu hartan berean aleguera cedin Ieſus ſpirituz, eta erran ceçan, Aitá, ceruco eta lurreco Iauná, eſquerrac rendatzen drauzquiat, ceren eſtali baitrauztec gauça hauc çuhurréy eta adituey, eta manifeſtatu baitrauztec haour chipiey: bay Aitá, ceren hala içan baita hire placer ona.

*Matth.* 11. 25.

22 Orduan diſcipuluetarat itzuliric errã ceçan, Gauça guciac niri neure Aitaz eman çaizquit, eta nehorc eztaqui nor den Semea, Aitác baicẽ:

eta nor den Aita, Semeac baiçen, eta nori-ere Semeac manifestatu nahi vkanen baitrauca.

*Matth.10. 16.*

23 Eta discipuluetarat itzuliric, appart erran ciecén,*Dohatsu *dirade* çuec dacusquiçuen gauçac dacusquiten beguiac.

24 Ecen erraiten drauçuet, anhitz Prophetac eta reguec desiratu vkan dutela çuec ikusten dituçuen gaucén ikustera, eta ezpaitituzte ikussi; eta ençuten dituçuen gaucén ençutera, eta ezpaitituzte ençun.

*Matth.22 35; marc 12. 28.*

25 *Orduan huná, Legueco doctorbat iaiqui cedin, hura tẽtatzen çuela, eta cioela, Magistruá, cer eguinez vicitze eternala heretaturen dut?

26 Eta harc erran cieçón, Leguean cer da scribatua? nola iracurtzen duc?

*Deut.6.5.*

27 Eta harc ihardesten çuela erran ceçan,*Onhetsiren duc eure Iainco Iauna eure bihotz guciaz, eta eure arima guciaz, eta eure indar guciaz, eta eure pensamendu guciaz:*eta eure hurcoa eure buruä beçala.

*Leui.19.18*

28 Orduan erran cieçón, Vngui ihardetsi duc: hori eguic eta vicico aiz.

29 Baina harc bere buruä iustificatu nahiz, erran cieçón Iesusi, Eta nor da ene hurcoa?

30 Eta ihardesten çuela Iesusec erran ceçan, Guiçombat iausten cen Ierusalemetic Iericora, eta eror cedin gaichtaguinén artera, eta hec hura billuciric, eta çaurthuric ioan citeçen, *hura* erdi hilic vtziric.

31 Eta encontruz Sacrificadorebat iauts cedin bide harçaz beraz; eta hura ikussiric berce alde-

ticiragan cedin.

32 Halaber Leuitabat-ere leku hartara helduric eta hura ikussiric, berce aldetic iragan cedin.

33 Baina Samaritanobat *bere* bidea iragaiten çuela, ethor cedin harengana, eta hura ikussiric compassione har ceçan.

34 Eta hurbilduric lot citzan haren çauriac, emanic olio eta mahatsarno, eta hura eçarriric bere abrearen gainean, eraman ceçan ostaleriara, eta pensa ceçan.

35 Biharamunean partitzean idoquiric bi dinero eman cietzón ostatuari, eta erran cieçón, Errequeitu emóc huni, eta cer-ere guehiago despendaturen baituc, nic itzul nadinean rendaturen drauat.

36 Cein bada hirur hautaric irudi çaic gaichtaguinetara erori içan denaren hurco içan dela?

37 Eta harc erran cieçón, Hari misericordia eguin vkan draucana. Diotsa bada Iesusec, Oha, hic-ere eguic halaber.

38 Eta guertha cedin hec ioaiten ciradela, hura sar baitzedin burgu batetan: eta emazte, Martha deitzẽ cen batec recebi ceçan hura bere etchera.

39 Eta hunec çuen ahizpabat Maria deitzen cenic, harc-ere Iesusen oinetara iarriric cegoela, haren hitza ençuten çuen.

40 Baina Martha eguitecotan cen anhitz cerbitzuren eguiten: eta gueldituric erran ceçan, Iauna, eztuc hic ansiaric ceren neure ahizpác neuror cerbitzatzera vtziten nauen? erroc bada

ni aldiz aiuta neçan.

41 Eta ihardeſten çuela erran cieçón Ieſuſec, Martha, Martha, arrangura dun, eta tormentatzen aiz anhitz gauçeren ondoan:

42 Ordea gauçabat dun neceſſarió. Baina Mariac parte ona hautatu din, cein ezpaitzayo edequiren.

## CAP. XI.

1 *Chriſtec iracaſten othoitz eguiten. 9 ardura. 14 Mutua ſendatzen. 15 Blaſpemioa. 21 Borthitz harmatua. 24 Spiritu guiçonaganic ilkia. 28 Dohatſuac cein. 29 Iuduac ſigno eſquez egon. 31 Egu-erdico reguiná. 32 Niniuacoac. 34 Begui ſimplea edo gaichtoa. 39 Harrapaqueriá. Gaichtaqueriá. 42 Iu gemendua. Charitatea. 45 Legueco doctora. 46 Ecin iaſſan daitezqueen cargác. 47 Prophetén ſepulchreac. 49 Iaincoaren ſapientiá. 52 Eçagutzearen gakoa.*

1 GVertha cedin halaber leku batetan othoitz eguiten cegoela, ceſſatu cenean, errã baitzieçón bere diſcipuluetaric batec, Iauna, iracats ieçaguc othoitz eguiten, Ioanneſec-ere bere diſcipuluey iracatſi drauen beçala.

Mat.6.9. 2 * Eta erran ciecén, Othoitz eguiten duçuenean, erran eçaçue, Gure Aita ceruëtan aicena, Sanctifica bedi hire icena, Ethor bedi hire reſumá, Eguin bedi hire vorondatea, ceruän beçala, lurrean-ere.

3 Gure eguneco oguia iguc egunecotzat.

4 Eta barka ietzaguc gure bekatuac: ecen guc-

ere barkatzen diraueagu guri çor draucutẽ guciey. Eta ezgaitzala ſar eraci tentacionetan, baina deliura gaitzac gaichtotic.

5 Eta erran ciecén, Cein da çuetaric vkanen duena adiſquidebat, eta ioanen dena harengana gau-erditan eta erranen draucana, Adiſquideá, preſta ietzadac hirur ogui:

6 Ecen ene adiſquidebat ethorri içan duc bidetic enegana, eta eztiát cer aitzinean eçar dieçodan.

7 Eta harc barnetic ihardeſten duela erran deçan, Ezneçála faſcha: ia borthá ertſia duc, eta ene haourtchoac enequila dituc ohean: ecin iaiqui niaitec hiri emaitera.

8 Erraiten drauçuet, baldin iaiquiric eman ezpadieço-ere, ceren haren adiſquide den: halere harẽ muthiritaſſunagatic iaiquiric emanén draucа cenbat-ere behar baitu.

9 * Eta nic erraiten drauçuet, Eſca çaitezte, eta emanen çaiçue: bilhaeçaçue, eta eridenen duçue: bulka eçaçue eta irequiren çaiçue.

10 * Eçen eſcatzen den guciac recebitzen du: eta bilhatzen duenac erideiten du: eta bulkatzẽ duenari, irequiren çayo.

11 * Eta cein *da* çuetaric aitá, ſemea ogui eſca badaquió, harribat emanẽ draucana? edo baldin arrain eſca badaquio, ala arrainaren lekuan ſuguebat emanen drauca?

12 Edo baldin arraultze baten eſca badadi, ala ſcorpiona emanen drauca?

13 Beraz çuec baldin gaichto çaretelaric, ba-

*Mat.7.7 eta 21.22 marc 11. 24*

*ioan.14.13 eta 16.23 iac.1.10. Mat.7.8*

*Mat.7.9.*

daquiçue gauça onén çuen haourrey emaiten, cembatez guehiago çuen Aita celeſtialac emanen draue Spiritu ſaindua eſcaturen çaizconey.

Mat.9.32 eta 12.22

14 * Orduan egotz ceçan campora deabrubat, eta hura cē mutu: eta guertha cedin, deabrua ilki cenean, minça baitzedin mutua:eta mirets ceçaten gendetzéc.

Mat.9.34 eta 12.24 marc 3.22

15 Eta hetaric batzuc erran ceçaten,* Beelzebub deabruén princearen partez egoizten ditu campora deabruac.

16 Eta berceac tentatzen çutela, ſigno cerutic eſquez çaizcan.

Mat.12.25 marc 3.24

17 Baina harc nola baitzequizquian hayén pēſamenduac,erran ciecén,* Bere contra partitua den reſuma gucia,deſeguiten da:eta etche bere contra *partitua* erorten da.

18 Eta baldin Satan-ere bere contra partitua bada,nolatan haren reſumá egonen da?ecen badioçue Beelzebub-en partez campora egoiztē ditudala nic deabruac.

19 Eta baldin nic Beelzebub-en partez campo ra egoizten baditut deabruac,çuen ſeméc norē partez campora egoizten dituzte? halacotz hec içanen dirade çuen iuge.

20 Baina baldin Iaincoaren erhiaz campora egoizten baditut deabruac, ſegur heldu içan da çuetara Iaincoaren reſumá.

21 *Guiçon* borthiz harmatu batec beguiratzē duenean bere iaureguia, baquean dirade harc dituen gauçác.

22 Baina bera baino borhitzago batec aco-

mettaturic garait badeça, haren harmadura gucia, ceinetan fida baitzén, edequiten du, eta haren oſtillamendua diſtribuitzen.

23 Enequin eztena ene contra da: eta enequin biltzen ari eztena barreyatzen ari da,

24* Spiritu ſatſua ilki denean cembeit guiçonaganic leku leihorréz dabila, pauſſu bilha: eta eridéiten eztuenean, dio, Itzuliren naiz neure etchera nondic ilki içan bainaiz. *Mat.12.43*

25 Eta ethorriric erideiten du hura eſcobatua eta appaindua.

26 Eta orduan ioaiten da, eta hartzen ditu bercéric çazpi ſpiritu bera baino gaichtoagoac: eta ſarthuric habitatzen dirade han: *eta eguiten da guiçon haren azquen conditionea lehena baino gaichtoago. *Heb.6.4. 2 pier.2.20*

27 Eta guertha cedin gauça hauc erraitẽ cituela, altchaturic voza emazte batec populuarẽ artetic, erran baitzieçón, Dohatſu *dituc* hi egari auen ſabela, eta hic edoſqui dituán vgatzac.

28 Eta harc erran ceçan, Baina aitzitic dohatſu *dirade* Iaincoaren hitza ençuten, eta hurá beguiratzen dutenac.

29* Eta gendetzeac biltzen ciradela, has cedin erraiten, Generatione haur gaichtoa da: ſigno eſquez dago: baina ſignoric etzayó emanen* Ionas prophetaren ſignoa baicen. *Matth.12.39 eta 16.4* *Ionas 2.1*

30 Ecẽ nola Ionas Niniuacoey ſigno içan baitzayen, hala içanen çayó guiçonaren Semeaere generatione huni.

31*Egu-erdi *aldeco* reguina iaiquirẽ da iudicioã *1.Reg.10.1 2.chr.9.1.*

generatione hunetaco guiçonequin, eta condẽnaturen ditu: ceren ethor baitzedin lurrarẽ bazterretic Salomonen ſapientiaren ençutera: eta huná, Salomon bainoagoa leku hunetan:

32 Niniuaco guiçonac iaiquiren dirade iudicioan generatione hunequin, eta condemnaturen duté: *ceren Ionaſen predicationera emẽda baitzitecẽ: eta huná, Ionas bainoagoa leku hunetã.

*Ionas 3.5*
*Lehen 8.16*
*mat.5.15*
*marc 4.21.*

33 *Eta nehorc candela irachequia eztu leku eſtalian eçarten, ez gaitzurupean: baina candelerean, ſartzen diradenéc arguia ikus deçatẽçat.

*Mat.6.22.*

34 * Gorputzaren candelá, beguia da: beraz baldin hire beguia ſimple bada, hire gorputz gucia ere argui duquec: baina gaichto bada, hire gorputza-ere ilhun duquec.

35 Conſidera eçac bada hitan den arguia ilhũbe eztén.

36 Beraz baldin hire gorputz gucia argui *bada*, parteric batre ilhunic eztuela: argui içanen duc gucia, candelác *bere* claretateaz arguitzen auënean beçala.

37 Eta minçatu cenean, othoitz eguin cieçon Phariſeu batec barazcal ledin hura baithan, eta Ieſus ſarthuric iar cedin mahainean.

38 Baina Phariſeuac *hori* ikuſſiric mirets ceçã cerẽ lehenic ezpaitzedĩ ikuz barazcal aitzineã.

*Mat.23.25*

39 Eta erran cieçón Iaunac, *Baina çuec Phariſeuoc coparen eta platarẽ campoco aldea chahutzen duçue: baina çuen barnean dena, bethea da harrapaqueriaz eta gaichtaqueriaz.

40 Adimendu gabeác, campocoa eguin due-

nac eztu barhecoa-ere eguin?

41 Aitzitic duçuenetic emaçue elemosynatā: eta huna, gauça guciac chahu dituqueçue.

42 Baina maledictione çuen gainean Phariseuác: ecen detchematzen dituçue menthá eta rutá, eta baratze belhar gucia, baina vtziten dituçue guibelera Iaincoaren iugemendua eta charitatea: hauc eguī behar ciraden, eta hec ez vtzi.

43* Malediction çuen gainean Phariseuác: ecen on darizteçue lehen iar lekuey synagoguetan, eta salutationey merkatuetan. *Ber.20.46. mat. 23 6. marc12.38*

44 * Maledictione çuen gainean Scriba eta Pharisseu hypocritác: ecen monument agueri eztiradenac beçala çarete, eta hayén gainean dabiltzan guiçonéc ezpaitaquizquite. *Matth.23. 27.*

45 Orduan ihardesten duela Legueco doctoretaric batec diotsa, Magistrua, gauça horién erraitean gu-ere iniuriatzen gaituc.

46 Eta harc dio, * Maledictione çuen gainean-ere Legueco doctorác, ecen cargatzen dituçue guiçonac carga iassaiteco nequezcoez: baina ceuroc çuen erhietaric batez eztituçue cargác hunquitzen. *Mat.23.4. act.15.10.*

47 * Maledictione çuen gainean, ecen edificatzen dituçue Prophetén thumbác, eta çuē aitéc hil vkan dituzte hec. *Matt. 23. 29.*

48 Segurqui testificatzē duçue *ceuroc* çuen aitē obretan consentitzen duçuela: ecen hec hil dituzte, eta çuec edificatzē dituçue hayén thūbác.

49 Halacotz Iaincoaren sapientiac-ere erran du, Igorriren ditut hetara Prophetác eta Apo-

ſtoluac,eta hetaric hilen duté eta perſecutaturẽ.

50 Natione huni galdeguin daquionçat, munduaren creationeaz gueroztic iſſuri den Prophe ta gucién odola:

Gen.4.8. 2.Chro.24. 21.

51 * Abelen odoletic * Zachariaſen odolerano, cein hil vkan baitzutén aldareari eta templeari artean:are diotſuet,galde eguinen çayola natione huni.

52 Maledictione çuen gainean Legueco doctorác:ecen eçagutzearen gakoa kendu duçue: ceuroc etzarete ſarthu içan, eta ſartzen ciradenac beguiratu dituçue.

53 Eta gauça hauc hæy erraiten cerauztenean, has cequitzon Scribác eta Phariſeuac haguitz hertſen, eta propos iradoquiten anhitz gauçaz.

54 Celatan ceudela,eta cerbait harẽ ahotic ha tzaman aiherrez çabiltzala,accuſa leçatençat.

## CAP. XII.

*1 Phariſeuén altchagarria. 5 Iaincoaren beldur içateco. 8 Chriſt aithorturen duena. 10 Spiritu ſainduaren contretaco Blaſpemioa. 22 Viciaz anſiaric ezvkaiteaz. 31 Iaincoaren reſumá bilhatzeco. 33 Theſaurizatzeco non. 37, 45 Cerbitzari ona eta ga ichtoa. 39 Ohoina. 42 Deſpenſér leyala. 49 Sua ilurrean. 50 Chriſten baptiſmoa. 52 Diſſenſione içanen Euangeliogatic. 58 Partidarequin appoinctatzeco.*

1 BIzquitartean bildu içanic gendetze mulço handiac hambat non elkar aurizquitẽ baitzutén,has cequién erraitẽ bere diſcipuluey, * Lehenic beguira

Mat.16.6. marc.8.15

beguira çaitezte Phariseuén altchagarritic, cein baita hypocrisiá.

2 * Ecen ezta deus estaliric aguerturen eztenic: ezeta deus secreturic iaquinen eztenic.

*Leben 8.17 mat.10.26 marc 4.22.*

3 Halacotz ilhumbean erran dituçuen gauçác, arguiã ençunẽ dirade:eta beharrira gamberetan erran duçuena, predicaturen da etche gainetan.

4 * Eta diotsuet çuey neure adisquideoy, Etzáretela beldur gorputza hiltzen dutenén, eta guero ezpaitute cer guehiagoric eguin deçaten.

*Matth.10. 28.*

5 Baina eracutsiren drauçuet noren beldur behar çareten: çareten beldur, hil duqueenean gehennara egoiztecó authoritatea duenarén: are diotsuet, haren beldur çareten.

6* Eztira borz parra-chori bi dirutchotan saltzen, eta hetaric bat ezpaita ahanciric Iaincoaren aitzinean?

*Matth.10. 29*

7*Baina çuen buruco bilo guciac-ere contatuac dirade etzaretela beraz beldur:parra-chori araldeac baino guehiago balio duçue *çuec*.

*1.Sam.14. 45 act.27.34.*

8*Badiotsuet bada, Norc-ere ni aithorturen bai nau guiçonen aitzinean, guiçonaren Semeac-ere aithorturen du hura Iaincoaren Ainguerućn aitzinean.

*Leben 9.26 mat.10.32 2.tim.2.12*

9 Baina ni guiçonén aitzinean vkaturen nauena, vkatua içanen da Iaincoaren Ainguerućn aitzinean.

10* Eta norc-ere erranen baitu hitzic guiçonaren Semearen contra barkaturen çayó hari: baina Spiritu sainduaren contra blasphematurẽ duenari, etzayó barkaturen.

*Matth.12 31. marc 3.28. 1.ioã.5.16.*

*Motth. 10. 29* *marc 13. 12.*

11 *Eta eramanen çaituztenean ſynagoguetarā, eta magiſtratuetara, eta poteſtatetara, eztuçuela anſiaric, nola edo cer ihardetſiren duçuen edo cer erranen.

12 Ecen Spiritu ſainduac iracatſirē çaituzte ordu hartan berean, cer erran behar daten.

13 Eta erran cieçón gendetzecoetaric batec, Magiſtruá, erróc ene anayeri parti deçan eneçquin heretagea.

14 Baina harc erran cieçón, Guiçoná, norc eçarri nau ni iuge, edo partitzale çuen gainean?

15 Guero erran cieçón, Ikuſſaçue, eta beguira çaitezte auaritiatic: ecē cēbeitec *onhaſſunez* abūdantia badu-ere, bere vicia eztu bere onetaric.

16 Eta erran ciecén comparationebat, cioela, Guiçon abrats baten landéc abūdantqui fructu ekarri vkan duté:

17 Eta gogueta eguiten çuen bere baithan, cioela, Cer eguinen dut? ecen eztut nora bil ditzadan neure fructuac.

18 Eta erran ceçan, Haur eguinen dut: deſeguinen ditut neure granerac, eta handiagoac eguinen ditut: eta hara bilduren ditut neure fructu guciac, eta neure onac.

19 Eta erranen draucat neure arimari, Arimá, badituc on hādiac anhitz vrthetacozat bilduac: repoſa adi, ian eçac, edan eçac, eta atſeguin har eçac.

20 Baina erran cieçón Iaincoac, Erhoá, gaurco gauëan eure arimá edequiren çaic: eta dituán gauçác, noren içanen dirade?

21 Hala *da* onhassun handiac beretaco biltzen dituena, eta Iaincoa baithan abrats eztena.

22 Orduan erran ciecén bere disciupuluey, *Halacotz diotsuet, eztuçuen artharic çuen vicitzeaz, cer ianen duçuen: ez eta gorputzaz cerçaz veztituren çareten.

*Mat.6.25. philip. 6.8. 1.pier.5.7*

23 Vicia vianda baino guehiago da, eta gorputza abillamendua baino.

24 Considera itzaçue beleac, ecen eztutela ereiten ez biltzen, eta hec eztuté sotoric ez graneric, eta Iaincoac hatzen ditu hec, cembatez çuec choriéc baino guehiago balio duçue?

25 Eta nore çuetaric artha vkanez eratchequi ahal dieçaqueo bessobat bere handitassunari?

26 Bada baldin chipién dena-ere ecin badaguiçue, cer goiticoéz arthatsu çarete?

27 Consideraitzaçue floreac, nola handitzẽ diraden: eztirade nekatzen, eta eztute irutẽ: baina badiotsuet, are Salomon-ere bere gloria guciarequin eztela veztitu içan hetaric bat beçala.

28 Bada baldin egun landán belhar dena, eta bihar labeã eçartẽ dena Iaincoac hala ĩguru veztitzẽ badu, cẽbatez areago çuec fede chipitacoac

29 Çuec beraz eztaguiçuela galderic cer ianen duçuẽ edo cer edanẽ: eta etzaiteztela dudán iar

30 Ecen gauça hauc guciac munduco gendéc bilhatzen dituzté: baina çuen Aitac badaqui, ecen hauën beharra baduçuela.

31 Bainaitzitic bilha eçaçue Iaincoaren resumá, eta gauça hauc guciac emanen çaizquiçue gaineraco.

32 Ezaicela beldur tropel chipiá, ecẽ çuẽ Aitaren placer ona içan da çuey resumarẽ emaitera.

33 Sal itzaçue çuen onac, eta eman itzaçue elemosynatan. * Eguin itzaçue ceurondaco çahartzen eztiraden mulsác, ceruëtan thesaur nehoiz-ere falta eztaitẽbat: nora ohoinic ezpaita hurbiltzen,*eta non* cerrenec ezpaitu deseguiten.

Mat.6.20. 1.tim.6.19

34 Ecen non baita çuen thesaura, han içanen da çuen bihotza-ere.

35 *Bira çuen guerrunceac guerricatuac, eta *çuẽ* candelác irachequiac.

Eph.6.14.

36 Eta çuec *çaretẽ* noiz hayén nabussia ezteyetaric itzul daiten beguira dauden guiçonetarát irudi: dathorrenean, eta borthá bulka deçanean, bertan irequi deçotençát.

37 Dohatsu *dirade* cerbitzari hec, cein dathorrenean nabussiac eridenen baititu iratzarriac: eguiaz diotsuet guerricaturen dela bera, eta mahainean iar eraciren dituela, eta aitzinaraturic cerbitzaturen dituela.

38 Eta baldin badathor bigarrẽ veillán, eta heren veillán badathor, eta hala eriden ditzan: dohatsu dirade cerbitzari hec.

39 * Eta haur iaquiçue, ecen baldin baleaqui aitafamiliác cer orduz ohoina ethorteco licén, veilla leçaqueela, eta ezleçaqueela vtzi çulhatzera bere etchea.

Matth.24. 43. 1.thes.5.2. apoc.16.15

40 Çuec-ere bada çareten prest, ecen vste eztuçuen orduan guiçonaren Semea ethorrirẽ da.

41 Orduan erran cieçón Pierrisec, Iauna, guri erraiten draucuc comparatione hori ala *bay*

guciey-ere?

42 Eta erran ceçan Iaunac, Cein da despensér leyala eta çuhurra, nabussiac bere familiaren gaineco ordenatu duena, demborán ordinarioa deyençát?

43 Dohatsu *da* cerbitzari hura, dathorrineã nabussiac hala eguiten eridenen duena.

44 Eguiazqui erraiten drauçuet, ecen duen guciaren gaineco eçarriren duela hura.

45 Eta baldin erran badeça cerbitzari harc bere bihotzean, Berancen du ene nabussiac ethortera: eta has badadi cehatzen muthillén eta nescatoén, eta iaten eta edaten eta horditzen:

46 Ethorriren da cerbitzari haren nabussia, *harc* vste eztuen egunean, eta eztaquian orenean: eta bereciren du hura, eta haren partea infidelequin eçarriren.

47 Eta bere nabussiaren vorondatea eçagutu duen cerbitzaria, eta ezpaita preparatu, eta ezpaitu haren vorondatearen araura eguin, cehaturen da anhitz *vkaldiz*:

48 Baina eçagutu eztuena, eta cehatu içateco mereci duqueen gauçac eguin dituena, cehaturen da *vkaldi* gutiz. Bada anhitz eman içan çayon guciari, anhitz galde eguinen çayó: eta beguiratzera anhitz eman içan çayonari, hambat guehiago galde eguinen çayó.

49 Suaren emaitera ethorri naiz lurrera: eta cer nahi dut *guehiago* baldin ia irachequia bada?

50 Baina baptismo batez batheyatzeco naiz, eta nola hertsen naiz *haur* compli daiten artean?

51 Vſte duçue ecen lurreá baquearen eçartera ethorri naicela?ez, diotſuet, baina diuiſioneaṙe.

52 Ecen hemendic harát içanen dirade borz etche batetan diuiſionetan diratenic, hirurac bién contra, eta biac hirurén contra.

53 Diuiſionetan içanen da aitá ſemearen contra, eta ſemea aitaren contra: amá alabaren contra, eta alabá amaren contra: ama-guinharrebá bere errenaren cōtra, eta errena bere ama-guin harrebaren contra.

*Mat.16.2.* 54* Guero erraiten cerauen gendetzey-ere, Ikus deçaçuenean hodeybat altchatzen dela Occidentetic, bertan dioçue, vria heldu da: eta hala guerthatzen da.

55 Eta hegoác draunſanean, erraiten duçue, ecen bero eguinen duela: eta *hala* guerthatzē da.

56 Hypocritác, ceruären eta lurraren itchuraren iugeatzen daquiçue: eta dembora hunez nola eztuçue iugeatzen?

57 Eta nola ceuron buruz-ere eztuçue iugeatzen bide dena?

*Mat. 5.25* 58* Bada ioaiten aicenean eure partida contraſtarequin magiſtratuagana, enſeya adi bidean haren menetic ilkiten: tira ezeçançat iugeagana, eta iugeac eman ieçon ſargeantari, eta ſargeantac eçar ezeçan preſoindeguian.

59 Erraiten drauat, ezaiz ilkiren handic azquē pelata-ere renda diroqueano.

## CAP. XIII.

*3 Penitentiatara Chriſtec exhortatzen. 6 Ficotze fru-*

*Etu gabea piccatzera manatzen. 11 Emazte crocatuaz sendatzen. 15 Sabbath egunean vngui eguitea. 16 Mustarda bihiaren eta altchagarriaren comparationea. 24 Bortha herssia. 29 Iaincoaren resumán iartea. 34 Ierusalemeren destructionea.*

1 ETa baciraden batzu dembora hartan berean hari contatzen ceraucatenic Galileanoéz, cęinén odola Pilatec nahassi vkan baitzuen hayén sacrificioequin.

2 Eta ihardesten çuela Iesusec erran ciecén, Vste duçue ecen Galileano hauc berce Galileano guciac baino bekatoreago ciradela, ceren halaco gauçác suffritu baitituzte?

3 Ezetz diotsuet:aitzitic baldin emenda ezpaçaitezte guciac halaber galduren çarete.

4 Ezpa,Siloeco dorreac gainera eroriric hil vkan cituen hemeçortzi hec, vste duçue Ierusalemeco habitant guciac baino hoguendunago ciradela?

5 Ezetz diotsuet: aitzitic baldin emenda ezpaçaitezte,guciac halaber galduren çarete.

6 Erraiten çuen comparatione haur-ere, ficotzebat çuen edocein-batec landatua bere mahastian:eta fructu bilha ethor cedin hartara: eta etzeçan eriden.

7 Eta erran cieçón mahasti çainari, Huná,hirur vrthe dic ethorten naicela fructu bilha ficotze hunetara, eta eztiat erideitẽ: picca eçac:certaco lurra-ere empatchatzen du?

8 Eta harc ihardeſten çuela erran cieçón, Iauna, vtzi eçac are vrthe hunetan, inguru aitzurtu duquedano, eta vngarri eman deçaqueodano.

9 Eta baldin ekar badeça fructuric, *vngui*, ezpere, guero piccaturen duquec.

10 Eta iracaſten ari cen ſynagoga batetan Sabbathoan.

11 Eta huná, emaztebat ethor cedin eritaſſunezco ſpiritua çuenic ia hemeçortzi vrthez: eta cen crocatua, eta neholetan-ere ecin chuchent ceiten.

12 Eta hura ikuſſi çuenean Ieſuſec dei ceçan beregana, eta erran cieçón, Emaztea, lachatu aiz eure eritaſſunetic.

13 Eta gainean eçar cietzón eſcuac, eta bertã chuchent cedin, eta glorificatzen çuen Iaincoa.

14 Baina ihardeſten çuela ſynagogáco principalac, gaitzituric ceren Sabbathoã ſendatu çuen Ieſuſec, erran cieçon populuari, Sey egun dirade ceinetã lan eguin behar baita, hetã badaçatozte eta ſenda çaitezte, eta ez Sabbath egunean.

15 Ihardets cieçón bada Iaunac, eta erran ceçan, Hypocritá, çuetaric batbederac Sabbathoã eztu lachatzen bere idia edo bere aſtoa mangeratic, eta eramaiten ederatera?

16 Eta Abrahamen alaba haur, cein eſtecatu baitzuen Satanec, huná, hemeçortzi vrtheduela, etzén eſtecadura hunetaric lachatu behar Sabbath egunean?

17 Eta gauça hauc harc erraiten cituenean, cõfunditzen ciraden hari contraſtatzen çaizquion

guciac: baina populu gucia aleguer atzen cen harçaz eguiten ciraden gauça glorioſo guciéz.

18 *Orduan erraiten çuen *Ieſuſec*, Cer irudi du Iaincoaren reſumác? eta cerequin comparaturen dut hura?

*Matth.13. 31. marc 4.31.*

19 Muſtarda bihia irudi du, cein harturic guiçon batec eçar baitzeçan bere baratzean, eta haz cedin eta arbore handia eguin cedin eta ceruco choriéc ohatzeac eguin dituzte haren adarretan.

20 *Eta berriz erran ceçan, Cerequin comparaturen dut Iaincoaren reſumá?

*Matth. 13. 33.*

21 Altchagarria irudi du, cein harturic emazte batec eçar baitzeçan hirur neurri irinetan, gucia altchatu liçateno.

22 *Guero iragaiten cen hirietan eta burguëtan, iracaſten çuela, eta Ieruſalemeratco bidea eguiten çuela.

*Matt.9.35 marc 6.6.*

23 Eta erran cieçón norbeitec, Iauna, gutiac dira ſaluatzen diradenac? Eta harc erran ciecén,

24 *Enſeya çaitezte ſartzen bortha herſſitic: ecen anhitz, erraiten drauçuet, ſarthu nahiz ebiliren diradela, eta ecin ſarthuren baitirade.

*Matt.7.13*

25 Eta aitafamilia iaiqui datenean, eta borthá ertſi duqueenean, eta has çaitezteneau campoan egoiten, eta bortharen bulkatzen, erraiten duçuela, Iauna, Iauna, irequi eçaguc: eta ihardeſten duela erranen drauçue, Eztaquit çuec nongo çareten.

26 Orduan haſſiren çarete erraiten, Ian diagu hire preſentián, eta edan diagu, eta gure carri-

quetan iracatsi duc *hic.*

*Matt.7.23 eta 25.41. psal.6.8.* 27 *Eta erranen du, Erraiten draučuet eztaquit çuec nongo çareten: parti çaitezte eneganic iniquitate eguiten duçuen guciác.

28 Han içanen da nigar eta hortz garraſcots: ikus ditzaçueneã Abraham, eta Iſaac, eta Iacob eta Propheta guciac Iaincoaren reſumán, eta çuec campora iraizten çaretela.

29 Orduan ethorriren dirade Orientetic, eta Occidentetic: Aquilonetic, eta Egu-erditic: eta iarriren dirade mahainean Iaincoaren reſumán.

*Matth.19. 30. eta 20.16. marc 10. 31.* 30 *Eta huná, dirade azquen, lehen içanen diradenac: eta dirade lehen, azquen içanen diradenac.

31 Egun hartan berean hurbil citecen Phariſeuetaric batzu, erraiten ceraucatela, Ilki adi, eta oha hemendic: ecen Herodeſec hil nahi au.

32 Eta erran ciecén, Çoazte eta erroçue aceri hari, Huná, egoizten citiát deabruac campora, eta ſendatzea acabatzen diát egun eta bihar, eta hereneco egunean fin hartzen diat.

33 Baina bide eguin behar diat egun eta bihar eta etzi: ecen eztuc guerthatzen Prophetaric batre hil dadin Ieruſalemetic lekora.

*Matth.23. 37.* 34 *Ieruſaleme, Ieruſaleme, ceinec hiltzen baitituc Prophetác, eta lapidatzen hiregana igorri diradenac, cembat aldiz nahi vkan ditut bildu hire haourrac, oilloac bere chito aldea *bere* hegalén azpira beçala, eta ezpaituçue nahi vkan?

35 Horrá vtziten çaiçue çuen etchea deſert. Baina eguiaz diotſuet, ecẽ eznauçuela ikuſsiren,

guertha daiteno darraçuẽ, Benedicatu *dela* Iaunaren icenean ethorten dena.

CAP. XIIII.

2 *Hydropicoa ſendatu.* 3 *Sabbath egunéz vngui eguitea.* 11 *Humiliaturen dena.* 13 *Nor gomitatzeco.* 16, 23 *Affarira gomitatuac.* 26 *Chriſtgatic ahaidey gaitz eritziteco.* 27 *Chriſti iarreiquiteco.* 28 *Comparationeac.* 33 *Chriſten diſcipulu içatecotz nola gucia renuntiatzeco.*

1 GVertha cedin halaber hura ethorri cenean Phariſeuetaco principal baten etchera Sabbathoan bere refectionearẽ hartzera, hec gogoa emaiten baitzeraucaten.

2 Eta huná, guiçon hydropicobat cen haren aitzinean.

3 Orduan ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén Legueco doctorey eta Phariſeuey, cioela, Sori da Sabbathoan ſendatzea?

4 Eta hec ichilic egon citecen, Eta harc hura harturic ſenda ceçan, eta igor ceçan.

5 Eta ihardeſten cerauela, erran ceçan, Ceinec çuetaric aſtoa edo idia putzura eror badaquió, eztu bertan hura idoquiren Sabbath egunean?

6 Eta ecin gauça hauén gainean ihardets ceçaqueoten.

7 Erraiten cerauen halaber gomitatu içan ciradeney comparationebat, gogoatzen çuela nola lehen iarlekuéz hautatzen ciraden, cioſtela,

8 Norbeitec dei açanean ezteyetara, ezadila iar lehen lekuan, guertha eztadin, hi baino ohoratuagobat harc deithu duen:

9 Eta ethorriric hura eta hi deithu çaituztenac erran dieçán, Emóc huni lekua: eta orduan has ezadin ahalquerequin azquen lekuaren eduquiten.

Prou.25.7.

10 *Baina gomitatu aicenean, habil, iar adi azquen lekuan: dathorrenean hi gomitatu auenac erran dieçançat, Adiſquideá, igan adi gorago: orduan duquec ohore hirequin mahainean iarriric daudenén aitzinean.

Ber.18.14 mat.23.12

11 *Ecen bere buruä goratzen duen gucia, beheraturen da: eta bere buruä beheratzen duena, goraturen da.

Tob.4.7. prou.3.9.

12 Eta bera gomitatu çuenari-ere erraiten cerauçan, *Eguiten duanean barazcaribat edo affaribat, eztitzala dei eure adiſquideac, ez eure anayeac, ez eure ahaideac, ez auço abratſac, heç ere aldiz bere aldetic gomita ezeçatençát, eta ordaina renda eztaquián.

13 Baina eguiten duanean banquetbat, dei itzac paubreac, impotentac, mainguäc, itſuac:

14 Eta dohatſu içanẽ aiz: ceren ezpaitute nondic hiri *ordaina* renda: ecen hiri rendaturen çaic ordaina iuſtoén reſurrectionean.

15 Eta gauça hauc ençunic harequin mahainean iarriric ceudenetaric batec erran cieçón, Dohatſu *duc* Iaincoaren reſumán ogui ianen duena.

Matt.22.2 apoc.19.9.

16 Eta harc erran cieçón, *Guiçon batec eguin

ceçan affari handibat,eta dei ceçan anhitz:
17 Eta igor ceçan bere cerbitzaria affal ordutan, gomitatuey erraitera, Çatozte, ecen gauça guciac preſt dirade.
18 Baina guciac has citecen conſentimendu batez excuſatzen. Lehenac errã cieçón, Poſſeſſionebat eroſsi diat, eta haren ikuſtera ilki behar diat: othoitz eguiten drauat, eduqui neçac excuſatutan.
19 Eta berceac erran ceçan, Borz idi vztarri eroſsi citiat, eta banihoac hayén phorogatzera: othoitz eguiten drauat eduqui neçac excuſatutan.
20 Eta berceac errã ceçan, Emazte hartu diat, eta halacotz ecin niathorrec.
21 Eta itzuliric cerbitzari harc conta cietzón gauça hauc bere nabuſsiari. Orduan aſſerreturic aitafamiliác erran cieçón bere cerbitzariari, Habil fitetz placetara, eta hirico carriquetara, eta paubreac eta impotentac, eta mainguäc eta itſuac huna barnera erekar itzac.
22 Eta erran ceçan cerbitzariac, Nabuſsiá, eguin içan duc, manatu duán beçala eta oraino baduc leku.
23 Orduan errã cieçón nabuſsiac cerbitzariari, Oha bidetara eta berroetara, eta bortchaitzac, ſartzera bethe dadinçát ene etchea.
24 Ecen erraiten drauçuet, guiçon deithu içan ciraden hetaric batec-ere eztuela ene affaritic daſtaturen.
25 Eta gendetze handiac ioaiten ciraden ha-

requin:eta itzuliric erran ciecén.

Lehen 9.23 mat. 10.37 eta 16.24.

26 *Baldin nehor enegana ethorten bada etá gaitzeſtẽ ezpaditu bere aita eta amá,eta emaztea eta haourrac, eta anayeac eta arrebác, etare guehiago bere arima-ere, ecin date ene diſcipulu.

Matth. 10. 38. eta 16.24. marc 8.35.

27 *Eta norc-ere ezpaitacarque bere crutzea, eta ene ondoan ethorten *ezpaita*, ecin date ene diſcipulu.

28 Ecen cein da çuetaric dorrebat edificatu nahi duenic, lehen iarriric goſtuac contatzen eztituena,eya acabatzeco baduenez?

29 Fundamenta eçarri duqueen ondoan, eta ecin acabatu duqueenean, ikuſſiren duten guciac harçaz truffatzen has eztitecençát,dioitela,

30 Guiçon hunec haſsi du edificatzen eta ecin acabatu du.

31 Edo cein da reguea berce regue baten contra bataïlla emaitera abiatzen dena, lehen iarriric conſultatzen eztuen, eya hamar millarequin aitzinera ilki ahal daquidionez, hoguey millarequin haren contra ethorten denari?

32 Bercela hura oraino vrrun deno, embachadore igorriric baque eſquez iarten da.

33 Hala beraz, norc-ere çuetaric bere on guciac ezpaititu renuntiatzen *hura* ecin date ene diſcipulu.

Mat. 5.13. marc 9.5.

34 *On da gatza: baina baldin gatza gueçat badadi,cerçaz gacituren da?

35 Ezta lurrecotzat,ez ongarricotzat deuſgay: baina camporat egoizten da hura. Ençuteco

beharriric duenac, ençun beça.

## CAP. XV.

1 *Bekatoreac Christi behatzen.* 4 *Ardi errebelatua.* 7, 10 *Bekatore baten conuertitzeaz bozcario.* 8 *Drachma galdua.* 11 *Seme prodigoa.* 17 *Dolua.* 20 *Bekatore cõuertitzen diradenetara, misericordia.*

1 ETa hurbiltzen ciraden harengana publicano eta gende vicitze gaichtotaco guciac, hura ençun leçatençát.

2 Eta murmuratzẽ çutén Phariseuéc eta Scribéc, cioitela, Hunec gende vicitze gaichtotacoac recebitzen ditu, eta iaten du hequin.

3 Baina harc erran ciecén comparatione haur, cioela,

4 *Cein guiçonec çuetaric ehun ardi dituela eta hetaric bat galtzen duela, eztitu vtziten lauroguey eta hemeretziac desertuan eta ezta ioaiten galduaren ondoan, hura eriden deçaqueno? *Mat.18.12*

5 Eta eriden duenean eçarten du bere sorbaldén gainean alegueraric.

6 Guero ethorriric etchera, deitzen ditu adisquideac eta auçoac, diostela, Alleguera çaitezte enequin: ecen eriden dut neure ardi galdua.

7 Erraiten drauçuet ecen hala bozcario içanen dela ceruän bekatore emendatzen den baten gainean, *guehiago* ecen ez lauroguey eta hemeretzi iusto emendamendu mengoa eztutenén gainean.

8 Edo cein emazte hamar drachma dituenec, baldin gal badeça drachmabat, eztu arguia vizten, eta etchea eſcobatzen, eta bilhatzen diligentqui *hura* eriden deçaqueno?

9 Eta eriden duenean, deitzen ditu *emazte* adiſquideac eta auçoac, dioela, Aleguera çaiteztè enequin: ecen eriden dut galdu nuen drachmá.

10 Hala, diotſuet, bozcario içanen dela Iaincoaren Ainguerućn aitzinean, bekatore emendatzen den baten gainean.

11 Halaber erran ceçan, Guiçon batec cituen bi ſeme:

12 Eta hetaric gaztenac erran cieçón aitári, Aitá, indac onhaſſunetic niri heltzen çaitadan partea. Eta parti cietzén onac.

13 Eta egun gutiren buruän, guciac bilduric ſeme gaztenor ioan cedin herri vrrun batetara: eta han irion ceçan bere onhaſſuna, prodigoqui vici içanez.

14 Gucia deſpendatu vkan çuenean, eguin içan cen goſſete gogorbat herri hartan, eta hura has cedin behar içaten:

15 Eta ioanic leku hartaco burgés batequin iar cedin, eta *harc* igor ceçan bere poſſeſſionetara vrdén bazcatzera.

16 Eta deſir çuen vrdéc iaten çuten maguinchetaric bere ſabelaren bethatzera: eta nehorc etzeraucan emaiten.

17 Eta bere buruäri ohart cequionean, erran ceçan, Cembat alocacer diraden ene aitaren etchean oguia frango dutenic, eta ni goſſez hil-

tzen

tzen bainaiz!

18 Iaiquiric ioanen naiz neure aitagana,eta erranen draucat, Aitá, huts eguin diat ceruären contra,eta hire aitzinean.

19 Eta guehiagoric eznauc digne hire feme deitzeco : eguin neçac eure alocaceretaric bat beçala.

20 Iaiquiric bada ethor cedin bere aitagana. Eta hura oraino vrrun cela, ikus ceçan bere aitac,eta compafsione har ceçan, eta lafter eguinic egotz ceçan bere buruä haren leppora, eta pot eguin cieçon.

21 Eta erran cieçón femeac, Aitá, huts eguin diat ceruären contra,eta hire aitzinean,eta guehiagoric eznauc digne hire feme deitzeco.

22 Orduan erran ciecén aitác bere cerbitzariey, Ekarçue arropa principalena, eta iaunz eçoçue: eta emoçue erhaztũbat bere efcura, eta çapatac oinetara:

23 Eta ekarriric aretze guicena,hil eçaçue:eta iaten dugula atfeguin har deçagun.

24 Ecen ene feme haur hil cen,eta harçara viztu da : galdu cen, eta eriden da. Eta has citecen atfeguin hartzen.

25 Eta cen haren feme çaharrena landán, eta ethortẽ cela etcheari hurbildu çayonean,ençun citzan melodiá eta dançác.

26 Eta deithuric cerbitzarietaric bat, interroga ceçan hura cer cen.

27 Eta harc erran cieçón, hire anaye ethorri içan duc, eta hil vkan dic hire aitac aretze gui-

cembat,ceren osſoric hura recebitu duen.
28 Eta aſſerre cedin:eta etzén ſarthu nahi içan: bere aitác bada ilkiric othoitz eguin cieçón.
29 Baina harc ihardeſten çuela erran cieçón bere aitari, Huná, hambat vrthe dic cerbitzatzen audala, eta egundano hire manuric eztiat iragan, eta egundano pitinabat eztrautac eman neure adiſquidequin atſeguin hartzeco.
30 Baina hire ſeme haur,ceinec iretſi vkan baitu hire onhaſſun gucia putéquin, ethorri içan denean, hil vkan draucac huni aretze guicena.
31 Eta harc erran cieçón, Semé, hi bethi enequin aiz,eta ene gucia hire duc:
32 Eta atſeguin hartu behar çuán eta alegueratu,ceren hire anaye haur hil baitzén,eta viztu baita, galdu baitzén,eta eriden baita.

## CAP. XVI.

*1 Deſpenſer nabuſſia baithan accuſatua. 8 Munduaren haourrac. 9 Iniquitatezco abraſtaſſunac. 11 Leyaltatea. 13 Bi nabuſſi ecin cerbitza. 15 Bere buruären iuſtificatzea. 16 Leguea eta Prophetác. 18 Emaztearen vtzitea. 19, 20 Abrats gaichtoa eta Lazaroa. 31 Moyſeſen eta Prophetén ençutea.*

1 ETa erran ciecén bere diſcipuluey-ere, Guiçon abratsbat cen deſpenſerbat çuenic, haur accuſa cedin hura baithã, haren onén irioile beçala:
2 Eta hura deithuric erran cieçón, Cer dançut haur hiçaz? renda eçac eure deſpẽſaren contua;

ecen guehiagoric ecin aiçate deſpenſér.
3 Orduan erran ceçan bere baithan deſpenſerac, Cer eguinen dut, neure nabuſſiac deſpenſaren carguä edequiten drautanaz gueroz? aitzurreric ecin daidit, eſque ebiltera ahalque naiz.
4 Badaquit cer eguinen dudan, deſpenſergoatic kendu naiceneau recebi neçatençát *batzuc* bere etchetara.
5 Orduan deithuric bere nabuſſiaren çordunetaric batbedera, erran cieçón lehenari, Cembat çor draucac ene nabuſsiari?
6 Eta hunec erran ceçan, Ehun barril olio: eta harc erran cieçón, Har eçac eure cedulá, eta iarriric fitetz, ſcriba eçac berroguey eta hamar.
7 Guero berce bati erran cieçón, Eta hic cembat çorduc? eta harc erran ceçan, Ehun neurri ogui. Orduan harc erran cieçón, Har eçac eure cedulá, eta ſcriba eçac lauroguey.
8 Eta lauda ceçan nabuſsiac deſpẽſer gaichtoa, ceren çuhurqui eguin vkan baitzuen: hunegatic mundu hunetaco haourrac çuhurrago dirade, ecen ez arguico haourrac bere generationean.
9 Eta nic erraiten drauçuet, Eguin itzaçue çuendaco adiſquideac abraſtaſſun iniquoéz falta çaiteztenean recebi çaitzatençat tabernacle eternaletara.
10 Gauça chipienetan leyal dena, handian-ere leyal da: eta gauça chipian iniuſto dena, handian-ere iniuſtò da.
11 Bada baldin abraſtaſſun iniquoetan leyal içan ezpaçarete, abraſtaſſun eguiazcoetan nor

fidaturen çaiçue?

12 Eta baldin berceren gauçán leyal içan ezpaçarete, çuen dena norc emanen drauçue?

*Matt.6.24* 13 * Cerbitzaric batec-ere ecin bi nabussi cerbitza ditzaque: ecen edo batari gaitz eritziren drauca, eta berceari on: edo batarequin eduquiren du eta bercea menospreciaturen. Ecin cerbitza ditzaqueçue Iaincoa, eta abrastassunac.

14 Eta gauça hauc guciac ençuten cituzten Phariseuec-ere, cein baitziraden auaritioso: eta harçaz truffatzen ciraden.

15 Eta erran ciecén, Çuec çarete çuen buruäc iustificatzẽ dituçuenac guiçonén aitzinean: baina Iaincoac badaçaguzqui çuen bihotzac: ecen guiçoney gora çayena, abominatione da Iaincoaren aitzinean.

*Mat.11.12* 16 *Legueac eta Prophetéc *iraun duté* Ioanesganano: dembora harçaz gueroztic Iaincoaren resumá euangelizatzen da, eta batbederac hura du bortchatzen.

*Mat.5.18.* 17 *Errachago da ceruä eta lurra iragã ditecẽ, ecen ez Leguearen punctu hutsbat eror dadin.

*Mat.5.32. eta 19.9. 1.cor.7.11.* 18 *Norc-ere vtziten baitu bere emaztea, eta berce batequin ezcõcen baita, adulterio iauquiten du: eta senharrac vtzi duenarequin ezconcen denac, adulterio iauquiten du.

19 Cen bada guiçon abratsbat, eta veztitzen cen escarlataz eta cetaz, eta egun oroz tractatzen cen vngui eta magnificoqui.

20 Cẽ halaber paubrebat Lazaro deitzẽ cenic, cein baitzetzan haren borthán, çauriz bethea:

21 Eta çuen desir abratsaren mahainetic erorten ciraden appurretaric asSetzeco, baina are orac ethorten ciraden eta haren çauriac limicatzen cituztén.

22 Guertha cedin bada hil baitzedin paubrea, eta eraman baitzedin Ainguerueź Abrahamen bulharrera: hil cedin bada abrats hura-ere, eta ohortze içan cen.

23 Eta iffernuetan bere beguiac goiti altchaturic tormentetan cela, ikus ceçan Abraham vrrundanic, eta Lazaro haren bulharrean:

24 Orduan harc oihuz cegoela erran ceçan, Aita Abrahám, auc misericordia niçaz, eta igor eçac Lazaro, busta deçã bere erhi mocoa vrean, eta refresca dieçadan mihia, ecen tormentatzen nauc gar hunetan.

25 Eta erran ceçan Abrahamec, Semé, orhoit adi ecen eure onac eure vician recebitu dituala, eta Lazaroc halaber gaitzac: eta orain haur consolatzen duc, eta hi tormentatzen aiz.

26 Eta berce alde, gure eta çuen arteã abysmo handibat duc: hala non hemendic çuetarát iragan nahi diradenac, ecin baititezque, ezeta hortic hunát iragan.

27 Eta erran ceçan *harc*, Othoitz eguitẽ drauat beraz, Aitá, igor deçán hori ene aitaren etchera.

28 Ecen bacitiat borz anaye, hæy testifica diecençát, hec-ere eztatocençat tormentazco leku hunetara.

29 Diotsa Abrahamec, Bacitié Moyses eta Prophetác: ençun bitzate hec.

30 Baina harc erran ceçan, Ez, aita Abrahám: baina baldin hiletaric cembeit ioan badadi hetara, emendaturen dituc.

31 Eta Abrahamec erran cieçón, Baldin Moyses eta Prophetác ençuten ezpadituzte, ezeta baldin cembeit hiletaric resuscita badadi-ere, eztié sinhetsiren.

CAP. XVII.

*1 Scandaloac. 3 Barkatzea. 5, 19 Fedea. 10 Noiz nehor cerbitzari inutil. 12 Hamar sorhayo sendatu. 23 Christ-falsuac. 24 Christen eguna. 26 Noe. 27 Dilubioa. 29 Lot eta haren emaztea.*

*Matt.18.6 marc 9.42.*

1 GVehiago dioste *bere* discipuluey, *Impossible da scandaloac eztatocen: baina malediĉtione hari, norçaz ethorten baitirade.

2 Harc hobe luque baldin errota harribat haren leppoaren inguruän eçar baledi, eta egotz ledin itsassora, ecen ez chipi hautaric bat scandaliza deçan.

*Matth.18.15.*

3 Beguira çaitezte, *Baldin hire anayec hire contra faltatu badu, reprehendi eçac hura, eta baldin emenda badadi barka ieçóc.

*Matth.18.21.*

4 *Eta baldin çazpitan egunean faltatzen badu hire cõtra, eta çazpitan egunean itzultzen bada hiregana, dioela, Dolu diát: barkaturẽ draucac.

5 Orduan erran cieçõten Apostoluéc Iaunari, Augmenta ieçaguc fedea.

*Matth.17.20.*

6 Eta erran ceçan Iaunac, *Baldin fede bacin-

dute mustarda bihibat *dén* becembat, erran ahal cineçaqueote marçucér huni, Erroetaric ilki adi, eta landa adi itsassoan: eta obedi cinçaqueizte.

7 Baina ceinec çuetaric, cerbitzaribat duenean laboratzen edo abrén bazcatzen ari denic, landatic itzuli denean erraiten drauca bertã, Auançadi, eta iar adi mahainean.

8 Bainaitzitic eztrauca erraiten, Appain ieçadac affaria, eta guerricaturic cerbitza neçac, ian eta edan duquedano: eta guero ian eta edan eçac hic?

9 Esquerric othe drauca cerbitzari hari, ceren eguin baititu manatu içan çaizcan gauçác? Eztut vste.

10 Hala çuec-ere, eguin dituqueçuenean manatu içan çaizquiçuen gauça guciac, erraçue, Cerbitzari inutilac gara: eguin behar guenduena eguin vkan dugu.

11 Eta guertha cedin hura Ierusalemerat ioaitean iragaiten baitzen Samariaco eta Galileaco artetic.

12 Eta hura burgu batetan sartzen cela, bathu içan çaizcan hamar guiçon sorhayo, eta gueldi citecen vrrun:

13 Eta altcha ceçaten voza, cioitela, Iesus magistruá, auc misericordia guçaz.

14 Eta ikussi citunean erran ciecén, * Çoazte, eracuts ietzeçue çuen buruäc Sacrificadorey. Eta guertha cedin, ioaiten ciradela chahu baitzitecen,

*Leuit. 14.2*

15 Eta hetaric batec ikuſſi çuenean, ecen ſendatu cela, itzul cedin, glorificatzen çuela Iainçoa ocengui:
16 Eta egotz ceçan bere buruä ahozpez haren oinetara, eſquerrac emaiten cerauzcala, eta haur cen Samaritano.
17 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ceçan, Eztirade hamarrac chahutu içan? Bedratziac bada non *dirade*?
18 Batre ezta eridẽ içan itzuli denic, Iaincoari gloria emaitera, arrotz haur baicen.
19 Eta erran cieçón hari, Iaiquiric oha, eure fedeac ſaluatu au.
20 Eta interrogatu içanic Phariſeuéz noiz ethorteco cen Iaincoaren reſumá: ihardets ciecén, eta erran, Ezta ethorriren Iaincoaren reſumá paradarequin:
21 Eta eztute erranen, Huná hemen, edo, hará han: ecen huná, Iaincoaren reſumá barnean duçue.
22 Halaber erran ciecén diſcipuluey, Ethorriren dirade egunac deſiraturen baituçue guiçonaren Semearen egunetaric baten ikuſtera, eta ezpaituçue ikuſſiren.

*Matth.24. 23. marc 13. 21.*

23 *Eta erranen çaiçue çuey, Huna hemen, edo, hara han: *baina* etzoaztela, eta etzarreiztela.
24 Ecen nola chiſtmiſtac argui eguiten baitu ceruären azpian den bazter batetic, eta arguitzen *berce bazter* ceruären azpian denerano: hala içanen da guiçonarẽ Semea-ere bere egunea͂.
25 Baina lehen behar da anhitz ſuffri deçan

harc,eta reproba dadin natione hunez.

26 * Eta nola eguin baitzedin Noeren egunetan, hala içanen da guiçonaren Semearen egunetan-ere.

Gen.7.5. matth.24. 38. i.pier.3.20

27 Iaten çutén,edaten çutén, emazte hartzen çutén eta ezconçaz emaiten, Noe arkán ſar cedin egunerano:eta ethor cedin dilubioa, eta gal citzan guciac.

28 Halaber Lot-en egunetan-ere eguin içan cen beçala:iaten çutén,edatẽ çutén, eroſten çutén, ſaltzen çutén, landatzen çutén, edificatzen çutén:

29 * Baina Lot Sodomatic ilki cen egunean,ſuz eta ſuphrez vri eguin ceçan cerutic, eta guciac deſeguin citzan:

Gen.19.24

30 Halaber içanen da guiçonaren Semea declaraturen den egunean.

31 Egun hartan etche gainean datena, eta bere oſtillamendua etchean *badu*,ezalbeiledi iauts haren eramaitera:eta landán dena,halaber ezalbeiledi itzul guibelecoetara.

32 * Orhoit çaitezte Lot-en emazteaz.

Gen.19.26

33 *Nor-ere enſeyaturen baita bere viciaren ſaluatzen,*harc* du galduren hura:eta norc-ere galduren baitu,viuificaturen du hura.

Lehẽ.9.24. mat.10.39 eta 16.25 marc 8.35. ioan.12.25

34 * Erraiten drauçuet, gau hartan biga içanen dirade ohe batetan:bata harturen da,eta bercea vtziren.

Matth.24. 41.

35 Biga içanen dirade elkarrequin *errotan* ehaiten duqueitenic: bata harturen da, eta bercea vtziren.

36 Biga içanen dirade landán: bata harturen da,eta bercea vtziren.

37 Orduan ihardeſten dutela, erraiten draucate, Non Iauna? Eta harc erran ciecén, * Non-ere *içanen baita* gorputza, hara bilduren dirade arranoac-ere.

Matth.24.28.

CAP. XVIII.

*1 Othoitzea. 2 Alhargunac faſchatzen çuen iugea 7 Elegituey iuſtitia eguinen. 8 Fedea. 9 Phariſeuaren othoitzea, 13 Publicanoarena. 14 Humilitatea. 16 Ceruëtaco reſumá noren: 18 eta hura norc heretaturen. 22 On gucién ſaltzeaz eta paubrey emaiteaz. 23 Abratſéz. 28 Gucia Chriſtgatic vtzi dutenéz. 31 Nola paſſionatu behar den Chriſtec aitzinetic diſcipuluey erraten. 35 Itſua arguitu.*

1 ETa erran ciecen comparationebat-ere *fin hunetaracotz* * ecen bethi othoitz eguin behar dela,enoyatu gabe:

Ecc.18.12. rom.12.12 1.theſ.5.17

2 Cioela, Iugebat cen hiri batetan Iaincoaren beldur etzenic, eta nehorçaz conturic eguiten etzuenic:

3 Eta cen hiri hartan *emazte* alhargunbat, eta ethor cedin harengana, cioela, Eguidac iuſtitia neure partida contraſtaz.

4 Eta *harc* etzuen deus eguin nahi vkan dembora lucez: baina guero erran ceçan bere baithan, Iaincoaren beldur ezpanaiz-ere eta ne-

horçaz conturic ez eguitenagatic:
5 Badaric-ere ceren faſcheria emaiten baitraut alhargun hunec, iuſtitia eguinen draucat, fineā-ere ethorriz buruä hauts eztieçadan.
6 Eta dio Iaunac, Ençuçue cer iuge gaichto harc erraiten duen:
7 Bada Iaincoac eztraue iuſtitia eguinen bere elegitu gaú eta egun hari oihuz dagozcaney, hayén alde aſſerretzera luçatzen badu-ere?
8 Erraiten drauçuet, ecen hayén mendequioa eguinen duela ſarri. Baina guiçonarē Semea dathorrenean, eridenen othe du federic lurrean?
9 Eta erran ciecén bere buruëtan iuſto ciradela fida ciraden batzuey, eta berceac deuſ-ere eſtimatzen etzituzteney, comparatione haur:
10 Bi guiçon igan içan ciraden tēplera othoitz eguitera, bata Phariſeu eta bercea publicano:
11 Phariſeuac cegoela gauça hauçaz bere baithan othoitz eguiten çuen, Iaincoá, eſquerrac emaiten drauzquiat ceren ezpainaiz berce guiçon harrapariac, iniuſtoac, adulteroac beçala: edo publicano haur beçala-ere.
12 Aſtean biguetan eguiten diat barur, poſſeditzen ditudan gauça gucietaric hamarrenac emaiten citiát.
13 Eta publicanoac vrrun cegoela, etzituen aré beguiac-ere cerurat altchatu nahi: baina bere bulharrari ceraunſón, cioelä, Iauna, amatiga aquit, *othoi* niri bekatoreoni.
14 Badiotſuet, iautſi içan dela haur iuſtificaturic bere etcherat, eta ez bercea: * ecen bere bu-

*Lebē 14. 11*
*mat. 23. 12*

ruä goratzen duen gucia,beheraturẽ da:eta bere buruä beheratzen duena,goraturen da.

*Matth.19.13*
*marc10.13*

15 *Eta ekarten cituzten harengana haour chipiac-ere,hec hunqui litzançat: eta hori ikus cecatenean diſcipuluéc,mehatcha citzaten.

16 Baina Ieſuſec haourtchoac beregana deithuric,erran ceçan, Vtzitzaçue haourtchoac enegana ethortera,eta eztitzaçúela empatcha:ecen hunelacoén da Iaincoaren reſumá.

17 Eguiaz erraiten drauçuet,norc-ere ezpaitu recebituren Iaincoaren reſumá haourtchoac beçala,eztela ſarthuren hartan.

*Matth.19.16*
*marc10.17*

18 *Orduan interroga ceçan cembeit iaunec,cioela,Magiſtru oná,cer eguinez, vicitze eternala poſſedituren dut?

19 Eta erran cieçon Ieſuſec, Cergatic deitzen nauc ni on?nehor eztuc onic bat baicen,*eta hura*,Iaincoa.

*Exo.20.14*

20 Manamenduac badaquizquic,*Eztuc adulteraturen, Eztuc hilen, Eztuc ebatſiren, Eztuc teſtimoniage falſuric erranen, Ohoraitzac eure aita eta eure ama.

21 Eta harc erran ceçan,Horiac guciac beguiratu citiát neure gaztetaſſunetic.

22 Eta Ieſuſec hori ençunic errã cieçón, Oraino gauçabat falta çaic:duán gucia ſal eçac eta eman iecec paubrey: eta vkanen duc theſaurbat ceruän:eta athor,arreit niri.

23 Eta hura gauça horiac ençunic,triſte cedin: ecen guciz abratſa cen.

24 Eta ikuſſiric Ieſuſec hura haguitz triſtetu

cela, errã ceçan, Cein gaitz den onhaſſundunac Iaincoaren reſumán ſar ditecen!
25 Ecen errachago da cablebat ſar dadin orratzaren çulhotic, ecen ez abratſa ſar dadin Iain coaren reſumán.
26 Eta *haur* ençun vkan çutenéc errã ceçaten, Eta nor ſalua ahal daite?
27 Eta harc erran ceçan, Guiçonac baithã impoſſible diraden gauçác, poſſible dirade Iaincoa baithan.
28 * Eta erran ceçan Pierriſec, Huná, guc vtzi citiagu gauça guciác, eta iarreiqui gaitzaizquic hiri.
*Matth. 19. 27 marc 10 28.*
29 Eta harc errã ciecén, Eguiaz erraiten drauçuet, nehor eztela vtzi duenic etchea, edo aitamác, edo anayeac, edo emaztea, edo haourrac Iaincoaren reſumaren cauſaz,
30 Non vnguiz guehiago recebi ezteçan dem bora hunetan, eta ethorteco den ſeculán vicitze eternala.
31 *Eta harturic hamabiac erran ciecen, Huná, igaiten gara Ieruſalemera, eta compliturcn çaizquió, guiçonaren Semeari Prophetéz ſcribatu içan diraden gauça guciac.
*Matth. 20. 17 marc 10. 32.*
32 Ecen Gentiley liuraturen çaye, eta eſcarniaturen eta iniuriaturen eta thuſtaturen da.
33 Eta açotatu duqueitenean, hilen duté: baina hereneco egunean reſuſcitaturen da.
34 Eta hec gauça hautaric etzeçaten deus adi: eta ciraden hitz hauc hetaric eſtaliac, eta erraiten ciradenac etzituzten aditzen.

*Matth. 26. 29. marc 10. 46.*

35 * Eta guertha cedin hura Iericorát hurbiltzen cela, itſubat baitzén iarria bide bazterrean eſque cegoela.

36 Eta *harc* ençun ceçanean populua iragaiten, galde eguin ceçan, hura cer cen.

37 Eta erran cieçoten ecen Ieſus Nazareno iragaiten cela.

38 Orduan oihu eguin ceçan, cioela, Ieſus Dauid-en ſemeá, auc pietate niçaz.

39 Eta aitzinean ioaiten ciradenéc mehatchatzen çutén ichil ledinçát: baina harc vnguiz oihu guehiago eguitẽ çuen, Dauid-en ſemea, auc pietate niçaz.

40 Eta Ieſuſec guelditurie mana ceçan ekar lequion beregana, eta hura hurbildu içan cenean, interroga ceçan,

41 Cioela, Cer nahi duc daguiadan? Eta harc erran ceçan, Iauna, viſtá recebi deçadan.

42 Eta Ieſuſéc erran cieçón, recebi eçac viſtá: eure fedeac ſaluatu au.

43 Eta bertan ikus ceçan, eta hari iarreiquiten çayón, glorificatzen çuela Iaincoa: Eta populu guciac *hori* ikuſſiric eman cieçon laudorio Iaincoari.

## CAP. XIX.

2 *Zaccheo deithu.* 12 *Cerbitzariéy eman içan çaizten marcoac.* 17 *Chriſten etſayén punitionea* 28 *Chriſt Ieruſalemen ſartzen.* 39 *Baque, Gloria.* 41 *Ieruſalemerẽ deſtructionea Chriſtec aitzinetic erraiten.* 44 *Viſitationezco demborá.* 45 *Marchantac templetic iraizten:*

1 ETa ſarthuric Iericon,iragaiten cen.

2 Eta huná, Zaccheo deitzen cẽ guiçõbat, eta hura cen publicano principal, eta abrats:

3 Eta ikuſſi nahiz çabilan,cein cen Ieſus:eta ecin ceçaqueen gendetzearen cauſaz: ecẽ thaillu chipitaco cen.

4 Eta aitzinera laſter eguinic igan cedin baſſa ficotze batetara, hura ikus leçançat: ecen handic iragan behar çuen.

5 Eta leku hartara ethor cedin beçala goiti behaturic Ieſuſec ikus ceçan hura:eta erran cieçõ, Zaccheo, haitſa lehiatuqui: ecen egun hire etchean egon behar diat.

6 Orduan *haur* iauts cedin lehiatuqui,eta recebi ceçan hura aleguеraqui.

7. Eta *hori* ikuſſiric guciéc murmuratzen çutẽ, cioitela,Ecen guiçon vicitze gaichtotaco batenean ſarthu cela, alogea ledinçát.

8 Eta han cegoela Zaccheoc erran cieçón Iaunari, Huná, neure onén erdiac, Iauna, emaiten diraizteat paubrey: eta baldin deus nehori bidegabequi edequi badraucat, rendatzen diat halaco laur.

9 Orduan Ieſuſec erran cieçón,Egun ſaluamẽdua etche huni eguin içan ciayóc,ceren haur-ere Abrahamen ſeme baita.

10 *Ecen ethorri içan da guiçonarẽ Semea galdu içan cena bilha eta ſalua leçançat. *Matth. 18 12*

11 Eta hec gauça hauc ençuten cituztela, con-

tinuatzen çuen,eta erran ceçan comparatione-bat,ceren baitzén Ierusalemeco aldean, eta ceren vste baitzutén bertan Iaincoaren resumá manifestaturen cela.

*Matth.25. 14.*

12 Erran ceçan bada,* Guiçon noblebat parti cedin leku vrrun batetara, resuma baten conquestatzera,guero itzultzecotán.

13 Eta deithuric hamar cerbitzari bereric, eman cietzén hamar marco ,eta erran ciecén, Traffica eçaçue nathorren artean.

14 Eta bere ciuitatecoéc çaritzoten gaitz, eta igor cieçoten embachadorebat guibeletic, cioitela,Eztugu nahi horrec regna deçã gure gainean.

15 Eta guertha cedin itzuli cenean resumá cõquestaturic, mana baitzeçan dei lequizquion dirua eman cerauen cerbitzariac, laquiançat norc cer traffica eguin çuen.

16 Ethor cedin bada lehena,cioela,Iauna, hire marcoac hamar marco irabaci citic.

17 Eta *harc* erran cieçón,Vngui duc cerbitzari oná : ceren gauça chipian leyal içan baitaiz, auc bothere,hamar hiriren gainean.

18 Eta bercea ethor cedin, cioela, Iauna, hire marcoac eguin citic borz marco.

19 Eta *harc* huni-ere erran cieçón , Hi-ere aicén borz hiriren gaineco.

20 Eta bercea ethor cedin,cioela, Iauna, huná hire marcoa, cein eduqui baitut gorderic oihal batetan:

21 Ecen hire beldur içan nauc , ceren baitaiz

guiçon

guiçon gogorra: hartzen duc eçarri eztuana, eta biltzen duc erein eztuana.

22 Orduan *harc* erran cieçón, Eure ahotic iugeaturē aut, cerbitzari gaichtoá: bahaquian ecē guiçon gogorra naicela, hartzen dudala eçarri eztudana, eta biltzen dudala erein eztudana:

23 Nola beraz eztuc ene diruä banquean eman, eta nic hura lucuruarequin erekarri bainuqueen?

24 Eta present ciradeney erran ciecen, Edequi eçoçue marcoa, eta emóçue hamar dituenari.

25 Eta *hec* erran cieçoten, Iauna, bacitic hamar marco.

26 *Hala diotsuet, ecē duen guciari emanē çayola, eta eztuenari, duena-ere edequiren çayola.

Lebē 8. 18. mat. 13. 12 eta 25. 29. marc 4. 25

27 Guehiago, ene etsay nic hayén gainean regna neçan nahi vkan eztuten hec, ekatzue huna eta hil itzaçue ene aitzinean.

28 Eta gauça hauc erranic, aitzinean ioaiten cen Ierusalemerat igaiten cela.

29 * Eta guertha cedin, hurbildu cenean Bethphagera eta Bethaniara, Oliuatzetaco deitzen den mendi aldera, igor baitzitzan bere discipuluetaric biga,

Mat. 21. 1. marc. 11. 1.

30 Erraiten çuela, Çoazte çuen aurkaco burgura: hartan sarthu eta, eridenen duçue asto-vme arbat estecatua, egundano nehor gainean iarri etzayonic: hura lachaturic ekardaçue.

31 Eta baldin nehorc galde badaguiçue, Cergatic lachatzen duçue? Hunela erranen draucaçue, Ceren Iaunac hunen beharra baitu.

32 Eta ioanic igorri içan ciradenec eriden çuten erran cerauen beçala.

33 Eta hec asto-vmea lachatzē çutela, erran ciecen haren iabéc, Cergatic lachatzen duçue asto-vmea?

34 Eta hec erran ceçaten, Cerē Iaunac hunen beharra baitu.

Mat.21.7. ioan.12.14 35 * Eta eraman ceçaten hura Iesusgana, eta eçarriric berén abillamenduac asto-vme gaineā, eçar ceçaten gainean Iesus.

36 Eta hura cioala, hedatzen cituzten berén abillamenduac bidean.

37 Eta ia Oliuatzetaco mendi ondora hurbiltzen cela, has cedin discipulutze gucia alegueraz Iaincoaren laudatzen ocengui, ikussi vkan cituzten verthute guciacgatic,

38 Erraiten çutela, Benedicatu *dela* Iaunaren icenean ethorten den Reguea: baquea *dela* ceruän eta gloria *leku* gorenetan.

39 Orduan gendetzeco Phariseuetaric batzuc erran cieçóten, Magistruá, mehatcha itzac eure discipuluac.

40 Eta harc ihardesten cuela erran ciecén, Erraiten drauçuet, baldin ichil baditez hauc, bertan harr̃iéc oihu eguinen dutela.

41 Eta hurbildu cenean, ikussiric hiria, nigar eguin ceçan haren gainean, cioela,

42 O baldin hic berere eçagutu vkā bahitu eure iornata hunetan berere,* eure baquearen gau çác! Baina orai̅ estaliac diaudec hire beguietaric

Berr.21.6. mat.24.1 marc 13.1.

43 Ecen ethorriren dituc egunac hire gainera,

eta eure etſayéc aſſetiaturen auté trancheaz, eta inguraturen, eta herſturen alde gucietaric.

44 Eta arraſaturen auté hi, eta hire haour hitan barna diradenac : eta eztié vtziren hitan harria harriaren gainean: ceren ezpaituc eçagutu eure viſitationearen demborá.

45 *Eta ſarthuric templean, has cedin, hartan ſal tzen eta eroſten ari ciradenén cãpora egoizten.

*Matth. 21. 12. marc 11. 11*

46 Cioſtela, Scribatua da,* Ene etchea oratio-netaco etchea da, *eta çuec hura gaichtaguin lece eguin duçue.

*Eſa. 56. 7. Hiere. 7. 11*

47 Eta iracaſten ari cen egun oroz templean: *eta Sacrificadore principalac eta Scribác eta populuco principalac hura hil eraci nahiz ça-biltzan.

*Matth. 21. 15. marc 11. 17.*

48 Baina etzutén erideiten cer eguin ahal le-çaqueoten : ecen populu gucia cen attento harẽ ençutera.

CAP. XX.

*2 Chriſt bère authoritateaz Sacrificadorée interogatzẽ 4 Ioanneſen Baptiſmoa. 9 Laborariey alocatu i-çan çayen mahaſtia. 15 Seme primua laborariéc hil. 17 Harri arbuyatu içana Chriſt. 19 Sacrificado-rée hil nahi Chriſt. 22 Tributaren emaitea. 27 37 Re ſurrectionea. 29 Çazpi ſenhar vkan cituen emaztea 41 Chriſt Dauid-en ſeme. 46 Scribác nolaco.*

* ETa guertha cedin egun heta-taric batez, harc populua ira-caſten çuela templean, eta euangelizatzen cegoela, e-thor baitzitecẽ Sacrificadore

*Matth. 21. 24 marc 11. 27*

principalac eta Scribác, Ancianoequin,

2 Eta erran cieçoten, Erraguc cer authoritatez gauça horiac eguité dituán, edo nor den hiri authoritate hori eman drauana.

3 Eta ihardeſten çuela Ieſuſec erran ciecén, Interrogaturen çaituztet nic-ere çuec gauça batez: erradaçue bada niri,

4 Ioanneſen baptiſmoa cerutic cen, ala guiçonetaric?

5 Eta hec baci harduecaten berén artean, cioitela, Baldin erran badeçagu, Cerutic: erranen du, Cergatic beraz eztuçue ſinhetſi hura?

6 Eta baldin badarragu, Guiçonetaric: populu guciac lapidaturen gaitu: ecen ſegur daducate, Ioannes Propheta cela.

7 Ihardets ceçaten bada, etzaquitela nõdic *cen*

8 Orduan Ieſuſec erran ciecén, Nic-ere eztrauçuet erranen cer authoritatez gauça hauc eguiten ditudan.

9 Orduán has cedin populuari comparatione hunen erraiten, * Guiçon batec landa ceçan mahaſtibat, eta aloca ciecén hura laborariey, eta dembora lucez campoan egon cedin.

*Eſa.5.1. hiere.2.21. mat.21.33 marc.12.1.*

10 Eta ſaſoineã igor ceçan laborari hetara cerbitzaribat, mahaſtico fructutic lemotençat: baina hec hura cehaturic igor ceçaten hutſic.

11 Eta continua ceçan berce cerbitzari baten igortera: baina hec haur-ere cehaturic eta gaizqui tractaturic igor ceçaten hutſic.

12 Eta cõtinua ceçan herenarẽ igortera: baina hec haur-ere çaurthuric egotz ceçaten cãpora.

13 Orduan erran ceçan mahaſti iabeac, Cer eguinen dut? igorriren dut neure ſeme maitea: aguian haur dacuſſatenean ohoraturen duté:

14 Baina hura ikuſſiric laborariéc propos eduqui ceçaten, cioitela, Haur da primua: çatozte, hil deçagun haur, heretagea gure dençat.

15 Eta egotziric hura mahaſtitic campora, hil ceçaten. Cer bada eguinen draue hæy mahaſti iabeac?

16 Ethorriren da eta deſeguinen ditu laborari hec, eta emanen draue mahaſtia berce batzuey. Eta *haur* ençun çutenean erran ceçaten, Hala guertha eztadila.

17 Harc orduan hetarat behaturic dio, Cer da bada ſcribatua den hura, *Edificaçaléc arbuyatu duten harria cantoin buru eguin içan da?

*Pſal. 118. 22. eſa. 28. 16. act. 4. 11. rom. 9. 33. 1. pier. 2. 6.*

18 Harri haren gainera eroriren den gucia, çathicaturen da: eta noren gainera eroriren baita, hura du chehecaturen.

19 Orduan aiher ciraden Sacrificadore principalac eta Scribac haren gainean eſcuén eçartera ordu hartan berean: baina populuaren beldur ci tecen: ecen eçagutu vkan çutén hayén cõtra erran çuela comparatione haur.

20 Eta *hura* gogoatzẽ çutela, igor citzaten eſpiác iuſto ciradela irudi eguiten çutela, hura hitzean hatzaman leçatençat, Gobernadorearen ſeignorián eta botherean eçar leçatençat.

21 *Eta *hec* interroga ceçaten hura, cioitela, Magiſtruá, baceaquiagu vngui erraiten eta iracaſtẽ duala, eta ezágoela perſonara behá, baina Iain-

*Matt. 22. 16. marc 12. 13*

coaren bidea eguiazqui iracaften duala.

22 Bide dugu eman tributic Cefari,ala ez?

23 Eta adituric hayén fineciá,erran ciecén,Cer gatic tentatzen nauçue?

24 Eracuftaçue dinerobat: norenac ditu imagina eta fcribua?Eta ihardeften çutela erran ceçaten,Cefarenac.

*Rom.13.7* 25 Orduan erran ciecén,* Renda ietzoçue beraz Cefaren diradenac,Cefari:eta Iaincoaren di radenac,Iaincoari.

26 Eta ecin haren hitza reprehenditu vkan du té populuaren aitzinean: eta miraz iarriric haren repoftaren gainean ichil citecen.

*Matth.22.23 marc 12.18.* 27 * Orduan hurbil cequizquion Sadduceu batzu(ceinéc vkatzen baituté refurrectionea) eta interroga ceçaten.

*Deut.25.5* 28 Cioitela,Magiftruá,*Moyfefec fcribatu diraucuc, Baldin cembeiten anayea hil badadi emazte duelaric, eta haourric gabe hil badadi, har deçan haren anayeac haren emaztea, eta eguin dieçón leinu bere anayeri.

29 Bada çazpi anaye içan dituc, eta hetaric lehena emazte harturic hil içan duc, haourric gabe.

30 Eta har ciecán hura bigarrenac,hura-ere hil cidian haourric gabe.

31 Guero herenac har cieçán hura, eta halaber çazpiec-ere: eta etzeçatean haourric vtzi, eta hil cituán.

32 Eta gucién ondoã hil ciedián emaztea-ere.

33 Refurrectionean bada hetaric ceinẽ emaz-

te içanẽ da?ecen çazpiéc vkan dié hura emazte
34 Orduan ihardeſten çuela erran ciecén Ieſu-ſec, Mundu hunetaco haourréc hartzẽ duté ez-conçaz eta hartzen dirade.
35 Baina ſecula harẽ, eta hiletaco reſurrectio-naren vkaiteco digne eridenen diradenéc, eztu-té harturen ezconçaz, ez eztirade harturen.
36 Ecen guehiagoric ecin hil daitezque: ecen Ainguerüen pare dirade: eta Iaincoaren ſeme di rade, reſurrectionezco ſeme diradenaz gueroz.
37 Eta hilac reſuſcitatzen diradela, *Moyſeſec-ere eracutſi vkan du berro aldean, dioeneã Iau-na *dela* Abrahamen Iaincoa, eta Iſaac-en Iain-coa, eta Iacob-en Iaincoa.

*Exod. 3. 6.*

38 Bada Iaïncoa ezta hilena, baina viciena: ecẽ guciac hari vici çaizquio.
39 Eta ihardeſten çutela Scribetaric batzuc er ran ceçaten, Magiſtruá, vngui erran duc.
40 Eta guehiagoric etziraden auſartzẽ deuſez haren interrogatzera.
41 * Eta erran ciecén, Nola erraiten duté Chriſt Dauid-en ſeme dela?

*Matth. 22 44. marc 12. 35*

42 Ikuſſiric ecen Dauid-ec berac dioela Pſal-mucn liburuän, * Erran drauca Iaunac ene Iau-nari, Iar adi ene eſcuinean,

*Pſal. 110. 1*

43 Eçar ditzaquedano hire etſayac hire oinén ſcabella.
44 Dauid-ec beraz Iaun hura deitzen du, eta nola da haren ſemé?
45 Eta populu guciac ençuten çuela, erran cie-cén bere diſcipuluey.

Lehē 11.43 mat.23.6. marc 12.38.

46 * Beguirauçue Scriba arropa lucequin ebili nahi diradenetaric, eta on dariztenetaric salutationey merkatuetan, eta lehen cadirey synagoguetan, eta lehen placey banquetetan.

47 Ceinéc iresten baitituzte *ema* alhargunén etcheac, are luçaqui othoitz eguin irudiz: hec receбituren duté damnatione handiagoa.

CAP. XXI.

*2 Bi dirutcho truncora eman cituen alhargunaz. 7 Mũduaren finaren aitzineco signoéz. 8 Christ-falsuéz. 12 Persecutionéz. 14 Iugén aitzinean ihardesteaz. 19 Patientiaz. 20 Ierusalemeren destructioneaz. 27 Azquen iudicioaz. 36 Veillatzeco, eta othoitz eguiteco.*

Marc 12, 41.

1 * ETa behatu çuenean ikus citzã abratssac eçarten cituztela bere donoac truncora.

2 Eta ikus ceçan *emazte* alhargun paubrebat ere bi peça chipi eçarten cituela.

3 Eta erran ceçan, Eguiazqui diotsuet, ecen alhargun paubre hunec berce guciéc baino guehiago eçarri vkan duela.

4 Ecen hauc guciéc soberaturic dutenetic eçarri vkan duté Iaincoaren oblationetara: baina hunec bere paubreciatic bere sustantia çuen gucia eçarri vkan du.

Lehē 19.43 mat.24.1. marc 13.1.

5 * Eta batzuc erraiten çutenean templeaz, ecen harri ederrez eta emaitzaz ornatua cela, erran ceçan.

6 Hauc dirade miratzen dituçuenac? ethorri-

ren dirade egunac ceinetan ezpaita guelditurен harria harriaren gainean deseguin eztadin.
7 Orduan interroga ceçaten hura, cioitela, Magistruá, noiz bada horiac içanen dirade? eta cer signo *içanen da* horiac ethorri behar diradeneã?
8 * Eta harc erran ceçan, Beguiraucue seduci etzaitezten: ecen anhitz ethorriren dirade ene icenean, dioitela, Ni naiz *Christ*: eta dẽbora hura hurbiltzẽ da: etzoaztela bada hayén ondoan.

Ephes. 5.6. 2. thess. 1.3.

9 Eta ençun ditzaçuenean guerlác eta seditioneac ezalbeitzinteizte icit: ecen gauça hauc lehen ethorri behar dirade: baina ezta bertan fina *içanen*.
10 Orduan erran ciecén, Altchaturen da nationea nationearen contra, eta resumá resumaren contra:
11 Eta lur ikaratze handiac içanen dirade lekutic lekura, eta gosseteac eta içurriteac, eta icidurác: eta signo handiac içanen dirade, cerutic.
12 *Baina gauça hauen gucion aitzinetic bere escuac eçarriren dituzte çuen gainean, eta persecutaturen çaituzte, liuratzen çaituztela synaguetara eta presoindeguietara, eramanic Reguetara eta Gobernadoretara, ene icenagatic.

Matt. 24.8 marc 13.9.

13 Eta horiac helduren çaizquiçue testimoniagetan.
14 *Eçarçue bada çuen bihotzetan, aitzinetic ez pensatzera nola ihardetsiren duçuen.

Lehẽ. 12.12 mat. 10.19 marc 13.11

15 Ecen nic emanen drauçuet aho, eta iaquite ceini ecin contrastaturen baitzaizquio, ezeta resistituren çuey contrastaturen çaizquiçuen guciéc.

16 Halaber liuraturen çarete aitéz eta améz eta anayéz eta ahaidéz eta adiſquidéz: eta çuetaric hil eraciren duté:

17 Eta guciéz gaitzetſiac içanen çarete ene icenaren cauſaz.

Mat.10.30 18 * Baina çuen buruco bilobat ezta galduren.

19 Çuen patiẽtiáz poſſeditzaçue çuen arimác.

Dan. 9.27 mat.24.15 marc 13. 14. 20 *Eta ikus deçaçuenean Ieruſaleme gendarmeriaz inguratua, orduan albeitzinequite ecen hurbil datela haren deſtructionea.

21 Orduan Iudean diradenéc ihes albeileguite mendietarát: eta harẽ artecoac retira albeilitez: eta cãpoetan diradenac ezalbeilitez hartan ſar.

22 Ecen mendequiozco egunac dirade hauc, ſcribatuac diradẽ gauça guciac cõpli ditecençat

23 Eta dohain gaiz *emazte* içorrén eta eredoſquiten duqueitenén egun hetan, ecen neceſſitate handia içanen da lur haren gainean, eta hira populu hartan.

24 Eta eroriren dirade ezpataren ahoz, eta captiuo eramanen dirade natione gucietara, eta Ieruſaleme aurizquia içanen da Gentiléz, Gentilén demborác compli daitezqueno.

Eſa.13.10. ezech.32.7 mat.24.29 marc 13. 24. 25 *Orduan içanen dirade ſignoac iguzquian eta ilharguian eta içarretan: eta lurrean afflictione nationetã ez iaquinez cer eguin, orroaz daudela itſaſſoa eta bagác:

26 Hala non guiçonac hilac beçalacaturẽ baitirade iciduraren handiz, eta mundura ethorriren diraden *gaitzén* beguira egoitez: ecen ceruëtaco verthuteac ikaraturen dirade.

27 Eta orduan ikuſſiren dutē guiçonaren Semea ethorten dela hodey batetan bothere eta gloria handirequin.

28 Eta gauça hauc eguitē has ditecenean, chuchent albaitzinteizte, eta goiti albeitzinçate çuen buruäc, *ecen hurbiltzen da çuen redemptionea. Rom. 8. 23.

29 Eta erran ciecén comparatione *haur*, Ikuſquiçue ficotzea eta arbore guciac.

30 Ia hoſtatzen diradela dacuſſaçuenean, ceuron buruz eçagutzen duçue ecen ia hurbil dela vdá.

31 Halaber çuec-ere ikuſſiren duqueçuenean gauça hauc eguiten diradela, eçagut albeitzineçate ecen hurbil dela Iaincoaren reſumá.

32 Eguiaz erraiten drauçuet ecen eztela iraganen mende haur, gauça hauc gucioc eguin daitezqueno.

33 Ceruä eta lurra iraganen dirade, baina ene hitzac eztirade iraganen.

34 *Gogoa eyeçue bada çuen buruëy, çuen bihotzac ſortha eztitecen gormandiçaz, eta hordiqueriaz, eta vicitze hunetaco anſiéz: eta ſubitoqui gainera ethor eztaquiçuen egun hura. Rom. 13. 13

35 Ecen laço batec beçala attrapaturen ditu lur guciaren gainean habitatzen diradē guciac.

36 Veilla eçaçue bada, dēbora gucian othoitz eguiten duçuela, ethorteco diraden gauça guciey itzurteco digne eguin çaiteztēçat, eta guiçonaren Semearen aitzinean egon ahal çaitezteçat.

37 Eta egunáz templean iracaften ari cen, eta gauaz Oliuatzetaco deitzen den mendian egoiten cen.

38 Eta populu gucia goicean ethorten cen harengana, templean hura ençun leçançat.

## CAP. XXII.

*1, 8 Bazcoa. 19 Cenaren inftitutionea. 20 Teftamentu berria. 24 Apoftoluéc ihardu qui bere arteco guehientaffunaz. 26 Chrift miniftre. 32 Pierrifgatic Chriftec othoitz eguin. 34 Pierrifen arnegamenduaz. 36 Mulfáz. Maletáz. Ezpatáz. 39 Chrift othoiztez egon. 43 Ainguerüäc confortatzen, 44 odolez icerdi. 47 Iudafec traditzen. 57 Pierrifec vkatzen. 61 Chriftec Pierrifganat behatzen. 62 Pierris nigarrez. 63 Chrift efcarniatzen eta cehatzen. 70 Chriftec Iaincoaren Seme dela cōfeffatzen.*

*Matt.26.1 marc 14 1.*

1 *ETa cen hurbiltzẽ altchagarri gaberico oguién beftá, Bazco erraiten dena:

2 Eta çabiltzan Sacrificadore principalac eta Scribác nolatan hura hil ahal leçaqueten: ecen populuaren beldur ciraden.

*Matth.26. 14. marc 14.13*

3 *Baina Satan far cedin Iudas icen goiticoz Ifcariot deitzen cenera *cein baitzén* hamabién contuco.

4 Eta hura ioanic minça cedin Sacrificadore principalequin eta capitainequin nola hura liura lieçaqueen.

5 Eta aleguera citecen, eta accorda citecen hari diru emaitera.

6 Eta *harc* prometta ceçan:eta gendetzeric ezlicenean haren hæy liuratzeco dembora propiren bilha çabilan.

7 *Ethor cedin bada altchagarri gaberico oguién eguna, ceinetá hil behar baitzen Bazcoa.

Matth.26.17. marc 14.12.

8 Eta igor citzan Pierris eta Ioannes, cioela, Ioanic appain ieçàguçue Bazcoa iá deçagúçat.

9 Eta hec erran cieçoten, Non nahi duc appain deçagun?

10 Harc erran ciecén, Huná, hirian ſarthu eta, bathuren çaiçue guiçombat, pegarbat vr daramala:hari çarreitzate ſarthuren den etchera:

11 Eta erroçue etcheco aitafamiliari, Magiſtruac erraiten drauc, Non da neure diſcipuluequin Bazcoa ianen dudan oſtatua?

12 Eta harc eracutſiren drauçue gambera handibat appreſtatua:han appain eçaçue *Bazcoa.*

13 Orduan ioanic eriden citzaté gauça guciac erran cerauen beçala:eta appain ceçaté Bazcoa.

14 *Bada ordu hura ethorri eta, iar cedin mahainean,eta hamabi Apoſtoluac harequin.

Matth.26.20. marc 14.18. ioan 13.21

15 Eta erran ciecén, Deſirez deſiratu vkan dut Bazco hunen çuequin iatera, nic ſuffri deçadan baino lehen.

16 Ecen erraiten drauçuet, guehiagoric eztudala ianen hunetaric, compli daiteno Iaincoaren reſumán.

17 Eta copa harturic gratiác rēdatu cituenean erran ceçan, Har eçaçue haur, eta parti eçaçue çuen artean.

18 Ecen erraiten drauçuet eztudala edanen ai-

henaren fructutic, Iaincoaren resumá ethor daiteno.

*Matth.26.26. marc 14.22. 1.cor.11.24*

19 *Eta harturic oguia, gratiác rendatu cituenean, hauts ceçan: eta eman ciecén, cioela, Haur da ene gorputza çuengatic emaiten dena: haur eguiçue ene memoriotan.

20 Halaber copa-ere *eman ciecén*, affal ondoan cioela, Copa haur *da* Testamentu berria ene odolean, cein çuengatic issurten baita.

*Mat.26.21 marc 14.18. ioan 13.21 Psal.41.9.*

21 *Badaric-ere huná, ni traditzen nauenaren escua, enequin da mahainean.

22 Eta segur guiçonaré Semea, *ordenatu içan den beçala badoa: guciagatic-ere maledictione guiçon hari, ceinez traditzen baita.

23 Orduan hec has cequizquión bata berceari galde eguiten elkarren artean, eya cein cen hetaric hura eguinen luena.

24 Eta guertha cedin cõtentionebat-ere hayén artean, cein hetaric estimaturen cen guehien.

*Matth.20.25. marc 10.42.*

25 Baina harc erran ciecén, * Nationén reguéc seignoriatzen dute hayén gainean, eta hayén gainean authoritate dutenac, vnguiguile deitzen dirade.

26 Baina çueçaz ezta hala: aitzitic çuen arteco handiena biz chipién beçala: eta gobernatzen duena, cerbitzatzen duena beçala.

27 Ecen cein da handiago, mahainean iarriric dagoena, ala cerbitzun ari dena? eza mahainean iarriric dagoena? Bada ni naiz çuen artean cerbitzatzen ari dena beçala.

28 Eta çuec çarete enequin iraun duçuenac ene

tentationétan.

29 Nic bada diſpoſatzen drauçuet reſumá, niri neure Aitac diſpoſatu vkan drautan beçala.

30 Ian deçaçuençat eta edan ene mahainean ene reſumán, *eta iar çaiteztē thronoén gainean iugeatzen dituçuela Iſraeleco hamabi leinuac. *Matth. 19. 28.*

31 Erran ceçan halaber Iaunac, Simon, Simon, huná, *Satanec bihiaren ançora çuen bahatzeco deſira dic: *1. Pier. 5. 8.*

32 Baina nic othoitze eguin diat hiregatic, falta eztadin hire fedea: hic bada noizpait conuertituric confirmaitzac eure anayeac.

33 Eta harc erran cieçón, Iauna, preſt nauc hirequin eta preſoindeguira eta heriora ioaitera:

34 *Baina Ieſuſec errā ceçan, Hiri dioſſat Pieris, eztic ioren egun oillarrac, hiruretan ni neçaguála vka deçaqueán baino lehen. *Matth. 26. 34. marc 14. 30. ioan 13. 38*

35 Guero erran ciecén, *Çuec igorri çaituztedañean mulſa eta maleta eta çapata gabe, deuſen falta içan çarete? Eta hec erran ceçaten, Deuſen-ere. *Matt. 10. 9*

36 Erran ciecén bada, Baina orain mulſa duenac, har beça, halaber maleta-ere: eta eztuenac, ſal beça bere arropá, eta eros beça ezpátabat.

37 Ecen erraiten drauçuet oraino behar dela nitan complitu *ſcribaturic dagoen haur, Eta gaichtoequin cōtatu içan da. Ecen ſegur niçazco gaucéc fin hartzen duté. *Eſa. 53. 12. marc 15. 28.*

38 Eta hec erran ceçaten, Iauna, huná bi ezpata hemen. Eta harc erran ciecén, Aſco da. *Matth. 26. 36. marc 14. 32.*

39 *Guero ilkiric parti cedin coſtumatu be- *ioan 18. 1.*

çala Oliuatzetaco mendirát: eta iarreiqui içan çaizcan bere diſcipuluac-ere.

40 Eta leku hartara ethorri cenean, erran ciecén, *Othoitz eguiçue ſar etzaitezten tentationetan.

*Matth.26. 41. marc 14. 38.*

41 Orduan hura vrrund cedin hetaric harri iraitzi baten inguruä, eta belhauricaturic othoitz eguiten çuen,

42 Cioela, Aitá, baldin nahi baduc iragan eçac copa haur eneganic: badaric-ere ez ene vorondatea baina hirea eguin bedi.

43 Eta aguer cequión Ainguerua cerutic hura confortatzen çuela.

44 Eta herſturatan iarriric othoitze eguiten çuen cineçago, eta cen haren icerdia odol chorta gatzatu lurrera erorten diradenac beçala.

45 Guero orationetic iaiquiric ethor cedin bere diſcipuluetara, eta eriden citzan triſtez lo ceunçala.

46 Eta erran ciecén, Cergatic lo çaunçate? iaiqui çaitezte, eta othoitz eguiçue ſar etzaitezten tentationetan.

47 *Eta hura oraino minço cela, huná, compainiabat, eta Iudas deitzẽ cena, hamabietaric bat, hayén aitzinean ethortẽ cen, eta hurbil cequion Ieſuſi pot leguionçát.

*Matth.26. 47. marc 14. 43. ioan 18.3.*

48 Eta Ieſuſec erran cieçón, Iudas, pot batez guiçonaren Semea traditzen duc?

49 Orduan haren aldean ciradenéc ikuſſiric cer ethorteco cen, erran cieçoten, Iauna, ioren dugu ezpataz?

50 Eta io ceçan hetaric batec Sacrificadore principalaren cerbitzaria, eta edequi cieçon escuineco beharria.
51 Baina ihardesten çuela Iesusec erran ceçan, Vtzitzaçue *eguitera* huñadrano. Eta haren beharria hunquiric, senda ceçan hura.
52 Guero erran ciecén Iesusec harengana ethorri ciradẽ Sacrificadore principaley, eta templeco capitainey, eta Ancianoey, Gaichtaguin baten ondoan beçala ilki içan çarete ezpatequin eta vhequin?
53 Egun oroz çuequin nincela templean, eztituçue escuac hedatu ene gainera: baina haur da çuen oren hura, eta ilhumbearen botherea.
54 *Orduan hatzamanic hura eramã ceçatẽ, eta sar eraci ceçaten Sacrificadore subiranoaren etchean. Eta Pierris iarreiquitẽ çayón vrrũdanic.
55 *Eta sua viztu çutenean salaren erdian, eta elkarrequin iarri ciradenean, iar cedin Pierris-ere hayén artean.
56 Eta ikussi çuenean hura nescato batec su bazterrean iarria, hari begui eratchequiric erran ceçan, Haur-ere harequin cen:
57 Baina vka ceçan harçaz, cioela, Emazteá, eztinat eçagutzen hura.
58 Eta appur baten buruän bercebatec hura ikussiric erran ceçan, Hi-ere hetaric aiz. Baina Pierrisec diotsa, Guiçoná, ez nauc.
59 Eta quasi oren baten buruän, berce batec seguratzen çuen, cioela, Segurqui haur-ere harequin cen: ecen Galileano da.

*Matth.26. 57. marc 14. 53. ioan 18.24*
*Matth.26. 69. marc 14. 66. ioan 18.26*

60 Eta Pierrisec dio, Guiçoná, etzeaquiat eer erraiten duán. Eta bertan oraino hura minço cela, io ceçan oillarrac.

61 Orduan itzuliric Iaunac Pierrisganat beha ceçan: eta orhoit cedin Pierris Iaunaren hitzaz, nola erran vkan ceraucan, * Oillarrac io deçan baino lehen hiruretan vkaturen nauc.

Matth. 26. 34. ioan 13. 38

62 Eta camporat ilkiric Pierrisec nigar eguin ceçan mingui.

63 * Eta Iesus çaducaten guiçonac, truffatzen ciraden harçaz, *eta* cehatzen çutén:

Matth. 26. 67. marc 14. 65.

64 Eta hura inguru estaliric haren beguithar-teari ceraunsaten, eta interrogatzen çuten, cioitela, Prophetiza eçac nor den hi io auena.

65 Eta anhitz berce gauçaric erraiten çutén haren contra desondratzen çutela.

66 * Eta arguitu ceneã bil citecẽ populuco Ancianoac, eta Sacrificadore principalac, eta Scribác, eta eramã ceçatẽ hura bere cõseillu barnera

Matt. 27. 1 marc 15. 1. ioan 18. 28

67 Cioitela, Hi aiz Christ? erran ieçaguc. Eta erran ciecén, Baldin erran badieçaçuet, ez tuçue sinhetsiren:

68 Eta baldin interroga baçaitzatet-ere, ez-nauçue ihardetsiren, ez eta ioaitera vtziren.

69 Hemendic harát guiçonaren Semea iarria içanen da Iaincoaren verthutearen escuinean.

70 Orduan erran cieçoten guciéc, Hi aiz bada Iaincoaren Semea? Eta harc erran ciecén, Çuec dioçue ecen ni naicela.

71 Eta hec erran ceçaten, Cer guehiago testimoniage falta gara? ecen gueuroc ençun dugu beraren ahotic.

CAP. XXIII.

*1 Christ Pilaten aitzinean accusatu. 7 Herodesgana igorri içanic, 9 Ichilic egon. 11 Harçara Pilatgana igorri. 14, 20 Pilatec Christ largatu nahi, 24 hura condemnatzen eta Barabbas largatzen. 27 Emazteac nigarrez Christgatic. 28 Ierusalemeren destructioneaz. 33 Christ crucificatu. 39 Gaichtaguin harequin vrkatuetaric batac hura blasphematzen, 42 Eta berceac sinhesten. 44 Herri gucia ilhundu. 45 Templeco velá erdiratu. 47 Centenerac Iaincoa glorificatzen. 51 Iosephec Christ ohorzten.*

1 GVero altcha cedin hayén gendetze gucia, eta eraman ceçaten hura Pilatgana.

2 Eta has citecen haren accusatzen, cioitela, Eriden vkan dugu haur populuaren corrumpitzen, * eta tributén Cesari emaitetic debetatzē ari dela, dioela, bera dela Christ Reguea.

*Matth.22.21. marc 12.17. rom.13.7.*

3 *Orduan Pilatec interroga ceçan hura, cioela, Hi aiz Iudúen Reguea? Eta harc ihardesten ceraucala, erran ceçan, Hic dioc.

*Mat.27.11 marc 15.2. ioan 18.33*

4 Eta erran ciecén Pilatec Sacrificadore principaley eta gendetzey, Hoguenic batre eztut erideiten guiçon hunetan.

5 Eta hec hambat gortzenago ciraden, cioitela, Mouitzen dic populua, iracasten ari dela Iudea gucian, Galilean hassiric hunadrano.

6 Eta Pilatec Galileaz minçatzen ençun çuenean, interroga ceçan, eya Galileano cenez guiçona.

7 Eta eçaguturic ecen hura Herodesen iurisdi-

ctioneco cela, igor ceçan Herodesgana, huraere Ierusalemen cen egun hetan.

8 Eta Herodes Iesus ikussiric aleguera cedin haguitz: ecen aspaldi çuela, haren ikusteco desira çuen, ceren anhitz gauça ençuten baitzuen harçaz: eta sperança çuen cembeit signo ikussiren çuela harçaz eguiten.

9 Eta interroga ceçã anhitz hitzez: baina harc etzieçon deus ihardets.

10 Eta Sacrificadore principalac eta Scribác ceuden han arrogãtqui hura accusatzen çutela.

11 Baina Herodesec bere gendearequin hura menospreciaturic, eta escarniaturic, abillamendu churi batez veztituric, harçara igor ceçan Pilatgana.

12 Eta egun hartan berean adiquisde citecen elkarren artean Pilate eta Herodes: ecen lehen etsay ciraden elkarren artean.

13 Orduã Pilatec, deithuric Sacrificadore prinpalac, eta Gobernadoreac, eta populua, erran ciecén,

*Matth 27. 23. marc 15. 14. ioan 18.38 eta 19.4.*

14 *Presentatu drautaçue guiçon haur populuaren nahatsale beçala: eta huná, nic çuen aitzinean interrogaturic, hoguenic batre eztut eriden guiçon hunetan, çuec accusatzen duçuenetaric:

15 Baina ez Herodesec-ere: ecen igorri vkan çaituztet harẽgana, eta huná, herio mereci duen gauçaric eztrauca eguin.

16 Beraz gaztigatu eta, largaturen dut.

17 Eta behar cerauen bat largatu bestán.

18 Bada iar cedin oihuz elkarrequin gendetze gucia, cioela, Ken ieçaguc haur, eta larga ieçaguc Barabbas,

19 Cein baitzén, hirian eguin içan cen cẽbeit mutinationegatic eta heriotzegatic presoindeguian eçarria.

20 Berriz bada Pilate minça cequién, Iesus largatu nahiz.

21 Baina hec heyagoraz iarten ciraden, erraiten çutela, Crucifica eçac, crucifica eçac hori.

22 Eta harc heren aldian erran ciecén, Baina cer gaizqui eguin du hunec? hiltzeco hoguenic eztut erideiten haur baithan: gaztigaturic beraz largaturen dut.

23 Baina hec hertsen çutén oihu handiz requeritzen çutela, crucifica ledin: eta hayén heyagorác eta Sacrificadore principalenac renforçatzen ciraden.

24 Orduan Pilatec iugea ceçan eguin lequién galde eguiten çutena.

25 Eta larga ciecén mutinationeagatic eta heriotzeagatic presoindeguian eçarri içan cena, ceinen escatu içan baitziraden: eta eman ciecén Iesus, nahi lutena leguiten.

26 *Eta hura eramaiten çutela, harturic Simon Cyreneano landetaric heldu cen-bat, hari crutzea gainean eçar cieçotẽ Iesusen ondoan eramaiteco.

*Matth. 27 32. marc 15.21*

27 Eta iarreiquiten çayón gendetze handia populutic eta emaztetaric, hura plaignitzen eta lamentatzen çutela.

28 Baina itzuliric hetarát Iesusec erran ceçan, Ierusalemeco alabác, eztaguiçuela nigarric ene gainean: baina ceuron buruén gainean eguiçue nigar, eta çuen haourrén gainean.

29 Ecen huná, ethorriren dirade egunac ceinétan erranen baitute, dohatsu *dirade* sterilac, eta engendratu eztuten sabelac, eta eredosqui eztuten vgatzac.

30 Orduan hassiren dirade erraiten mendiey, *Eror çaitezte gure gainera: eta mendisquey, estal gaitzaçue.

31 *Ecen baldin egur hecean gauça hauc eguiten badituzte, ey harrean cer eguinen da?

32 *Eta eramaiten ciraden berceric bi gaizquiguile-ere harequin hil eraciteco.

33 Ethorri içan ciradenean bada Bur-heçur deitzen den lekura, han crucifica ceçaten hura, eta gaizquiguileac: bata escuinean eta bercea ezquerrean.

34 Eta Iesusec erraiten çuen, Aitá, barka iecec: ecen etzeaquie cer eguiten dutén. Guero haren abillamenduac partituric, çorte egotz ceçaten.

35 Eta populua han egoiten cen beha cegoela: eta truffatzen ciraden harçaz Gobernadoreac-ere hequin, cioitela, Berceac emparatu ykan ditu, empara beça bere buruä, baldin haur bada Christ Iaincoaren elegitua.

36 Eta truffatzen ciraden harçaz gendarmesac-ere, hurbiltzen çaizcala eta vinagre presentatzen ceraucatela:

37 Eta erraiten çutela, Baldin hi bahaiz Iuduén

*Esa. 2. 19. ose. 10. 8. apoc. 6. 16. eta 9. 6.*

*1. Pier. 4. 17.*

*Matth. 27. 38. marc 15. 27. ioan 19. 18.*

Reguea empara eçac eure buruä.

38 Eta cen ſcributobat-ere harẽ garayan, letra Grec-ez eta Latinez eta Hebraicoz ſcribatua, *hitzhautan*, HAVR DA IVDVEN REGVEA.

39 Eta gaizquiguile vrkatuetaric batac blaſphematzen çuen hura, cioela, Baldin hi bahaiz Chriſt, empara eçac eure buruä eta gu.

40 Baina ihardeſtẽ çuela berceac reprotcha ceçan hura, cioela, Ezaiz Iaincoarẽ berere beldur, ikuſsiric ecen condemnatione berean aicela?

41 Eta gu behinçat iuſtoqui: ecen eguin ditugunén merecituac recebitzen citiagu: baina hunec eztic deus gaizquiric eguin.

42 Eta erran cieçón Ieſuſi, Orhoit albeitẽdi niçaz, Iauna, ethor adinean eure reſumara.

43 Orduan errã cieçón Ieſuſec, Eguiaz erraitẽ drauat, egun enequin içanen aicela paradiſoan.

44 *Eta cen ſey orenẽ inguruä, eta ilhũbe eguín cedin lur guciarẽ gaineã bedratzi orenetarano.

45 Iguzquia-ere ilhund cedin, * eta templeco yelá erdira cedin artetic.

46 Eta oihu eguinic voz hãdiz Ieſuſec dio, *Aitá, hire eſcuetã eçarten diat neure ſpiritua. *Eta haur erranic renda ceçan ſpiritua.

47 *Eta ikuſsiric Centenerac cer eguin içan cen, glorifica ceçan Iaincoa, cioela, Eguiazqui guiçon haur iuſto cen.

48 Eta ſpectacle hartara bildu içan ciradẽ gendetze guciac, ikuſsiric eguin içan ciradẽ gauçác bere bulharrey ceraunſtela itzultzen ciraden.

*Marc 15. 33.*
*Matth. 27. 51. marc 15. 38.*
*Pſal. 31. 5.*
*Matth. 27. 50. marc 15. 37. ioan 19. 30*
*Matth. 27. 54. marc 15. 39.*

49 Eta ceuden haren eçagunac guciac vrrun, eta emazte elkarrequin hari Galileatic iarreiqui içan çaizcanac, gauça hauc ikuſten cituztela.

Matth. 27. 57. marc 15. 42. ioan 19. 38

50 *Eta huna, Ioſeph çaritzan guiçõbat, conſeiller, guiçon ona eta iuſtoa:

51 (Hunec etzuen conſentitu hayén cõſeilluan ez eguitatean) Iuduén Arimathea hirico, eta hura-ere Iaincoaren reſumaren beguira cegoen:

52 Hura ethorriric Pilatgana, eſca cedin Ieſuſen gorputzaren.

53 Eta hura erautſiric eſtal ceçan mihiſſe batez, eta eçar ceçan monumẽt batetan cein baitzén arroca batetan ebaquia, ceinetan oraino nehor ezpaitzén eçarri içan.

54 Eta cen preparationeco eguna, eta Sabbath eguna haren *ondoan* heldu cen.

55 Eta iarreiquiric harequin Galileatic ethorri içan ciraden emaztec-ere mira ceçaten monumenta, eta nola eçarri içan cen haren gorputza.

56 Guero itzuli ciradenean appreſta citzaten vſſainac eta vnguentuac, eta Sabbathoan repoſa citecen, manamenduaren araura.

CAP. XXIIII.

*2, 9 Emaztéc Chriſt reſuſcitatu dela denuntiatzen. 13 Bi bideazcori Chriſt aguertzen, 36 eta hamequey. 41 Hayén incredulitateaz. 43 Chriſtec reſuſcitatuz gueroztic ian. 47 Penitentiá. Bekatuen barkamẽdua. 48 Apoſtoluac Chriſten teſtimonio. 49 Haey Spiritu ſaindua promettatzen. 50 Chriſt Apoſtoluac benedicaturic, 51 cerurat igaiten, 52 eta hayéc adoratzen.*

1 *BAina aſteco lehen *egunean*, guciz goiz ethor citecen monumentera, ekarten cituztela appaindu cituztén vſſain onac: eta cembeit *emazte* hequin.

*Marc 16.1 ioan. 20.1.*

2 Eta eriden ceçaten harria moumentetic aldaratua.

3 Eta ſarthu ciradenean etzeçaten eriden Ieſus Iaunaren gorputza.

4 Eta guertha cedin hec halacotz duda handitan ciradela, huná bi guiçon eriden baitzitecen han, chiſtmiſt ançora arguitzen çuten abillamendutan.

5 Eta nola icituac baitziraden, eta beheititzen baitziraden beguithartez lurrera *guiçon hec* erran ciecén, Cergatic hilén artean bilhatzen duçue vici dena?

6 Ezta hemen, baina reſuſcitatu da: *orhoit çaitezte nola errá ceraüçuen oraino Galilean cela,

*Lehen 9.22 mat 17.23 marc 9.31.*

7 Cioela, Behar da guiçonaren Semea liura dadin vicitze gaichtotacoen eſcuetara, eta crucifica dadin: eta hereneco egunean reſuſcita dadin.

8 Eta orhoit citecen haren hitzéz.

9 Eta monumentetic itzuli ciradenean, conta cietzén gauça hauc guciac hamequey, eta berce guciey.

10 Eta ciraden Maria Magdalena eta Ioanna eta Maria Iacqueſen *ama*, eta berce hequin ciradenac, gauça hauén Apoſtoluey erraileac.

11 Eta irudi cequiztén erguelqueria beçala hayén hitzac, eta etzitzaten ſinhets,

*Ioan. 20.6.* 12 *Baina Pierrisec iaiquiric laster ceguian monumentera, eta ikartzera beheitituric ikus citzá mihisse hutsac bere gain eçarriac: guero ioan ce din bere baithan mireste̋ çuela eguin içá cenaz.

*Marc 16. 12.* 13 * Eta huná, hetaric biga ioaiten ciraden egun hartan berean burgu batetara hiruroguey stadio Ierusalemetic vrrun, Emaus deitzen cenera:

14 Eta minço ciraden elkarren artean heldu içan ciraden gauça hauçaz guciéz.

15 Guertha cedin bada hec minço ciradela eta ciharducatela, Iesus-ere hæy hurbilduric ioan baitzedin hequin batean.

16 Baina hayen beguiac luluratuac ceuden hura eçagut ezleçatençát.

17 Eta erran ciecén, Ceric dirade ioaiten çaretela çuen artean compartitzen dituçuen hitz horiac, eta *cergatic* çarete triste?

18 Eta ihardesten çuela batac Cleopas deitzen cenac, erran cieçón, Hi euror aiz Ierusalemen arrotz, eta eztaquizquic hartan egun hautan eguin içan diraden gauçac?

19 Eta harc erran ciecén, Cer gauça? Eta erran cieçoten, Iesus Nazarenoaz, cein içan baita gui çon Propheta, eguinez eta erranez botheretsua, Iaincoaren eta populu guciaren aitzinean.

20 Eta nola hura liuratu vkã dutén Sacrificadore principalée eta gure Gobernadoréc herioare̋ condemnationera, eta crucificatu vkan dutén.

21 Eta guc sperança guendián hura cela Israel redemitu behar çuena: badaric-ere horién gucion gainera, egun duc herén eguna gauça hauç

eguin içan diradela.

22 Baina gure arteco emazte batzuc-ere icitu guiaitié, cein guciz goiz monumentean içan baitirade:

23 Eta eriden eztutenean harē gorputza, ethorri içan dituc, dioitela visionebat-ere Aingueruënic ikussi vkan dutela, hura vici dela dioitenenic

24 Eta ioan içan dituc gurequin ciradenetaric batzu monumentera, eta hala eriden dié nola emaztéc errā baitzuten: baina bera eztié ikussi.

25 Orduan harc erran ciecen, O adimendu gabeac, eta Prophetéc erran dituzten gauça gucién sinhestera bihotz berantcorretacoac!

26 Etzena behar Christec gauça horiac suffritzan, eta bere glorian sar ledin?

27 Guero hassiric Moyses baitharic eta Propheta gucietaric, declaratzen cerauzten Scriptura gucietan harçaz beraz ciraden gauçác.

28 Eta hurbil citecen ioaiten ciraden burgura, eta harc vrrunago ioaitera irudi eguiten çuen.

29 Baina bortcha ceçaten, cioitela, Ago gurequin: ecen arratsá duc, eta eguna duc beheratu. Sar cedin bada hequin egoitera.

30 Eta guertha cedin hequin mahainean iarriric cegoela, oguia harturic gratiác renda baitzitzan, eta hautsiric eman baitziecén.

31 Orduan irequi citecen hayén beguiac, eta eçagut ceçaten hura: baina hura ken cedin hayén aguerritic.

32 Eta erran ceçaten elkarren artean, Etzena gure bihotza erratzen gutan, minço çaicunean

bidean, eta declaratzen cerauzquigunean Scripturác?

33 Eta iaiquiric ordu hartan berean itzul citecen Ierusalemera, eta eriden citzaten elkargana bilduac hamecác, eta hequin ciradenac:

34 Erraiten çutela, Resuscitatu da Iauna eguiazqui, eta aguertu içan çayō Simoni.

35 Hec-ere conta citzaten bideco gauçác, eta nola heçaz eçagutu içan cen oguiaren hausteā.

*Marc 16. 14. iean.20 19*

36 * Eta gauça hauçaz minço ciradela, presenta cedin Iesus bera hayén artean, eta erran ciecén, Baquea *dela* çuequin.

37 Baina *hec* trublaturic eta icituric, vste çutén spiritubat çacussatela.

38 Orduan erran ciecén, Cergatic trublatu çarete, eta cergatic pensamenduac igaiten dirade çuen bihotzetara?

39 Ikus itzaçue ene escuac eta ene oinac: ecen hura bera naiz ni, hazta neçaçue, eta mira: ecen spirituac haraguiric ez heçurric eztu, nola nic dudala baitacussaçue.

40 Eta gauça hauc erran cituenean, eracuts cietzén escuac eta oinac.

41 Baina oraino hec alegueraz sinhesten etzutela, eta miraz ceudela, errā ciecén, Baduçue hemen deus iatecoric?

42 Orduan hec presenta cieçoten arrain erre çathibat, eta ezti orrace batetaric.

43 Eta harturic hayén aitzinean ian ceçan.

44 Eta erran ciecén, Hauc dirade erraiten nerauzquiçuen hitzac, oraino çuequin ninçela, e-

cē behar ciradela complitu niçaz Moyſeſen Leguean,eta Prophetetan,eta Pſalmuetan ſcribaturic dauden gauça guciac.

45 Orduan irequi ceçan hayén adimēdua, Scri pturén aditzeco.

46 Eta erran ciecén, Hala da ſcribatua eta hala behar cen Chriſtec ſuffri leçan, eta reſuſcita ledin hiletaric hereneco egunean.

47 Eta predica ledin haren icenean penitentiá eta bekatuén barkamendua natione gucietan, haſſiric Ieruſalemetic.

48 Eta çuec çarete teſtimonio gauça hauçaz: *eta huná nic igorriren dut neure Aitaren promeſſa çuen gainera:

*Ioā.14.26. eta 15.26. act.1.4.*

49 Baina çuec çaudete Ieruſalemeco hirian verthutez garaitic vezti çaitezqueteno.

50 Guero eramā citzan camporát Bethaniarano eta bere eſcuac altchaturic, benedica citzan.

51 * Eta guertha cedin hec benedicatzen cituela,appartaturic hetaric,goiti altcha baitzedin ce rurát.

*Marc 16.19. act.1.9.*

52 Eta hec hura adoraturic itzul citecen Ieruſalemera, bozcario handirequin.

53 Eta ciraden bethi templean, laudatzen eta benedicatzen çutela Iaincoa.Amen.

# IESVS CHRISTEN EVANGELIO SAINDVA S. IOANNEN ARAVRA.

## CAP. I.

*1 Christ Iainco, 4 Vicitzé, 5 eta Argui. 6 Ioannésec Christez testificatzé. 12 Iaincoaré haourrac cein 17 Gratiá, Christez. 18 Iaincoa nehorc ez ikussi. 20 Nola Ioannes eztén Christ. 26. 33 Vrezco baptismoa. 29 Iaincoaren Bildotsa. 37 Ioannesen discipuluac Christi iarreiqui. 40 Andriu, 43 Simon Cephas, Pierris. 44 Philippe deithu. 45, 49 Nathanael, eta haren fedea.*

1 HATSEAN cen Hitza, eta Hitza cen Iaincoa baithan, eta Iainco cen Hitza.

2 *Hitz* haur cen hatsean Iaincoa baithan.

Colos.1.16. 3 *Gauça guciac *Hitz*har çaz eguin içan dirade: eta hura gabe deus ezta eguin, eguin denic.

4 Hartan cen vicitzea, eta vicitzea cen guiçonén Arguia:

5 Eta Argui hunec ilhumbean arguitzen du: eta ilhumbeac hura eztu comprehenditu.

6 *Içan da guiçon-bat Iaincoaz igorria, Ioannes deitzen cenic. Mat.3.1. marc 1.2. luc.3.2.

7 Haur ethor cedin teſtimoniage *ekartera* Arguiaz teſtifica leçançat, guciéc harçaz ſinhets leçatençat.

8 Etzén hura Arguia, baina *igorri cen* Arguiaz teſtifica leçançát.

9 *Haur cen Argui eguiazcoa, mundura ethorten den guiçon gucia arguitzen duena. Berriz 8.12 eta 9.5.

10 Munduan cen, *eta mundua harçaz eguin içan da, eta munduac eztu hura eçagutu. Heb.11.3.

11 Beretara ethorri içan da, eta beréc eztute hura, recebitu.

12 Baina hura recebitu duten guciey, eman dra ue priuilegio Iaincoaren haour içateco, haren icenean ſinheſten duteney:

13 Cein ezpaitirade iayo odoletaric, ez haraguiaren vorondatetic, ez guiçonaren vorondatetic: baina Iaincoaganic.

14 *Eta Hitza haragui eguin içã da, eta habitatu içan da gure artean, (eta *contemplatu vkan dugu harẽ gloriá, gloriá *diot* Aitaganic engẽdratu bakoitzarena beçala) gratiaz eta eguiaz bethea Mat.1.16 luc 2.17. Mat.17.5. 2.pier.1.17

15 Ioanneſec teſtificatu vkã du harçaz, eta oihu eguin, cioela, Haur da ceinez erraitẽ-bainuẽ, Ene ondoan ethorten dena, ni baino aitzinecoago da: ecen ni baino lehen cen.

16 *Eta haren abundantiatic guciéc recebitu vkan dugu, eta gratia gratiagatic. Coloſ.1.19. eta 2.9.

17 Ecen Leguea Moyſeſez eman içan da, *baina* gratiá eta eguiá Ieſus Chriſtez eguin içã da.

*1. Ioan. 4. 12. 1. tim. 6. 16*

18 * Iaincoa nehorc eztu ikussi eguñdano, Aitaren bulharrean den seme bakoitzac berac declaratu *draucu.*

*Matt. 3. 11 marc 1. 17. act. 13. 25.*

19 * Eta haur da Ioannesen testimoniage, Iuduéc Ierusalemetic Sacrificadoreac eta Leuitác igorri cituztenecoa, hura interroga leçatençat, Hi nor aiz?

20 Eta aithor ceçan, eta etzeçan vka: eta aithor ceçan, *cioela*, Eznaiz ni Christ.

21 Orduan interroga ceçaten, Cer beraz? Elias aiz hi? Eta erran ceçan, Eznaiz. Propheta aiz hi? Eta ihardets ceçan, Ez.

22 Erran cieçotẽ bada, Nor aiz? respostu deyegunçát igorri gaituzteney: cer dioc eurorrez?

*Esa. 40. 3 matth. 3. 3 luc 3. 4.*

23 Dio, Ni *naiz* desertuan oihuz dagoenaren voza, * Plana eçaçue Iaunaren bidea, Esaias Prophetác erran çuen beçala.

24 Eta igorri içan ciradenac Phariseu ciraden.

25 Eta interroga ceçaten hura, eta erran cieçoten. Cergatic beraz bathcyatzen ari aiz, baldin hi Christ ezpahaiz, ez Elias, ez Propheta?

26 Ihardets ciecén Ioannesec, cioela, Ni batheyatzen ari naiz vrez, baina çuen artean da bat çuec eçagutzen eztuçuenic:

*Mat. 3. 11. marc. 1. 7. luc 3. 16. act. 1. 5. eta 11. 16. eta 19. 4.*

27 * Hura da ene ondoan ethorten dena, cein ni baino aitzinecoago baita, ceinen çapataco hedearen lachatzeco ezpainaiz ni digne.

28 Gauça hauc Bethabaran eguin içan ciradẽ Iordanaz berce aldean, non Ioannes batheyatzen ari baitzén.

29 Biharamunean ikusten du Ioannesec Iesus haren-

harẽgana ethortẽ dela, eta dio, Huná Iaincoaren Bildotſa munduaren bekatuac kencen dituena.

30 Haur da ceinez erraiten bainuẽ, Ene ondoã ethorten da guiçon-bat, cein ni baino aitzinecoago baita, ecen ni baino lehen cen.

31 Eta nic eznuen hura eçagutzen: baina Iſraeli manifeſta daquionçát, halacotz ethorri naiz ni vrez batheyatzera.

32 Orduan *bada* teſtifica ceçan Ioanneſec, cioela,* Ikuſſi dut Spiritua iauſten dela vſſo columba baten guiſſán cerutic eta egon-*ere* bacedin haren gainean.

*Mat.3.16. marc 1.10 luc 3.22.*

33 Eta nic eznuen eçagutzen hura: baina vrez batheyatzera igorri nauenac, erran ceirautan, Noren gainera ikuſſirẽ baituc Spiritua iauſten, eta egoiten haren gainean, hura duc Spiritu ſainduaz batheyatzen duena.

34 Eta nic dut ikuſſi, eta dut teſtificatu ecen haur dela Iaincoaren Semea.

35 Biharamunean berriz bacegoen Ioannes, eta harenic bi diſcipulu:

36 Eta ikuſſiric Ieſus ebilten, erran ceçan, Hará Iaincoaren Bildotſa.

37 Eta ençun ceçaten hura bi diſcipuluéc min çatzen, eta iarreiqui içan çaizcan Ieſuſi.

38 Eta itzuliric Ieſuſec, eta ikuſſiric hec çarreitzala, dioſte hæy, Ceren bilha çabiltzate? Eta hec erran cieçoten, Rabbi (erran nahi baita hambat nola Magiſtrua) non egoiten aiz?

39 Dioſte, Çatozte eta ikuſſaçue. Ethor citecen eta ikus ceçaten non egoiten cen: eta hura

baithan egon citecen egun hartan: ecen hamar orenén inguruä cen.

40 Cen Andriu Simon Pierrisen anayea, Ioannes minçatzen ençun çuten bietaric eta hari iarreiqui çaizconetaric bata.

41 Hunec eriden ceçan lehenic Simon bere anayea, eta erran cieçón, Eriden diagu Messias, (erran nahi baita hambat nola Christ.)

42 Eta eraman ceçan hura Iesusgana. Eta Iesusec harenganat behaturic erran ceçan, Hi aiz Simon Ionaren semea:* hi deithurẽ aiz Cephas (hambat erran nahi baita nola harria)

*Matth. 16. 18.*

43 Biharamunean Iesus ioan nahi içan cen Galileara eta eriden ceçan Philippe, eta erran cieçon, Arreit niri.

44 Eta Philippe cen Bethsaidaco, Andriuen eta Pierrisen hirico.

45 Erideiten du PhilippecNathanael, eta diotsa, Eriden diagu Iesus Nazarethecoa, Iosephen semea, ceinez scribatu baitu* Moysesec Legueá * eta Prophetéc.

*Gen. 49. 10 deut. 18. 18 Esa. 4. 2 eta 40. 10. eta 45. 8. hiere. 23. 5 eta 33. 14. ezg. 34. 23. eta 37. 24. dan. 9. 24.*

46 Eta erran cieçón Nathanaelec, Nazarethetic deus onic ahal date? Diotsa Philippec, Athor eta ikussac.

47 Ikus ceçan Iesusec Nathanael harengana ethorten cela, eta erran ceçan harçaz, Huná eguiazco Israelitabat ceinetan enganioric ezpaita.

48 Diotsa Nathanaelec, Nondic naçaguc? Ihardets ceçan Iesusec eta erran cieçón, Philippec dei ençan baino lehen, ficotze azpian incenean ikusten indudan.

49 Ihardets ceçan Nathanaelec, eta erran cieçón, Magiſtruá, hi aiz Iaincoaren Semea: hi aiz Iſraeleco Reguea.

50 Ihardets ceçan Ieſuſec, eta erran cieçón, Ceren errã drauadan, Ikuſſi aut ficotze azpian, ſinheſten duc? gauça hauc baino handiagoric ikuſſiren duc.

51 Halaber erran cieçón, Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, Hemendic harat ikuſſiren duçue ceruä irequiric, eta Iaincoaren Aingueruac igaiten eta iauſten diradela guiçonaren Semearen gainera.

## CAP. II.

*1 Chriſt, ura mahatſarnotara conuertituric, 11 Bere burüären manifeſtatzen haſſi: 12 Capernaumera ioan: 13 Ieruſalemera igan. 14 Saltzaleac templetic iraitzi. 16 Iaincoaren etchea. 19 Temple deſeguina arreguinen. 23 Anhitzec Chriſt baithan ſinheſten.*

1 ETa hereneco egunean ezteyac eguin citecen Cana Galileacoã: eta Ieſuſen ama cẽ hã

2 Eta deithu içan cen Ieſus-ere, eta haren diſcipuluac ezteyetara.

3 Eta faltatu cenean mahatſarnoa, bere amác diotſa, Ieſuſi, Mahatſarnoric eztié.

4 Diotſa Ieſuſec, Cer dut nic hirequin emazteaꝰ oraino eztun ethorri ene orena.

5 Dioſte haren amac cerbitzariey, Cer-ere

erran baitieçaçue, eguiçue.

6 Eta ciraden han ſey kuba harrizcoric eçarriac Iuduén purificationearen araura, çaducatenic batbederac birá edo hirurná neurri.

7 Dioſte Ieſuſec, Bethaitzaçue kubác vrez. Eta bethe citzaten garairano.

8 Orduan dioſte, Eraitſaçue orain, eta ekarroçue meſtedoſtalari. Eta ekar cieçoten:

9 Eta daſtatu çuenean meſtedoſtalac vr mahatſarno eguin içan cena (eta etzaquian nondic cen: baina vra karreatu çuten cerbitzariéc baçaquiten) deitzen du ſpoſoa meſtedoſtalac,

10 Eta diotſa, Guiçon guciac lehenic mahatſarno ona eçarten dic, guero vngui edan duquei ten orduã, gaichtoena: *baina* hic beguiratu vkan duc mahatſarno ona oraindrano.

11 Signo hatſe haur eguin ceçan Ieſuſec Cana Galileacoan, eta manifeſta ceçan bere gloriá: eta ſinhets ceçaten hura baithan harẽ diſcipuluéc

12 Guero iauts cedin Capernaumera, bera eta haren amá eta haren anayeac eta haren diſcipuluac: eta egon citecen han, ez anhitz egun.

13 Ecen hurbil cen Iuduén Bazcoa. Igan cedin bada Ieſus Ieruſalemera.

14 Eta eriden citzan templean idi eta ardi eta vſſo columba ſalçaleac, eta cambiadoreac iarriric ceudela.

15 Eta eguinic açotebat kordatoz, guciac egotz citzan templetic, eta ardiac eta idiac: eta cambiadorén monedá iſſur ceçan, eta mahainac itzul citzan.

16 Eta vsso columba salçaley errã ciecén, Ken itçaçue gauça hauc hemendic: eta eztaguiçuela ene Aitaren etcheaz merkatalgoataco etche.

17 Orduan orhoit citecen haren discipuluac e-cen scribatua dela, *Hire etcheazco zeloac ni iã niauc.

Psal. 69.10

18 Ihardets ceçaten bada Iuduéc eta erran ci-eçoten, Cer signo eracusten draucuc gauça ho-riac eguin ditzán?

19 Ihardets ceçan Iesusec, eta erran ciecén, *Deseguin eçaçue temple haur, eta hirur egu-nez dut altchaturen:

Matth. 26 61. eta 27. 40. marc 14. 58. eta 15.29

20 Erran ceçaten bada Iuduéc, Berroguey, eta sey vrthez edificatu içan duc temple haur, eta hic hirur egunez altchaturen duc?

21 Baina hura minço cen bere gorputzazco templeaz.

22 Bada resuscitatu cenean hiletaric, orhoit ci-tecen haren discipuluac, nola haur erran vkan cerauen: eta sinhets ceçaten Scripturá, eta Iesu-sec erran çuen hitza.

23 Eta Ierusalemen cenean Bazco bestán, an-hitzec sinhets ceçaten haren icenean, ikussiric harc eguiten cituen signoac.

24 Baina Iesus bera etzayen fida, ceren harc e-çagutzen baitzituen guciac:

25 Eta ceren ezpaitzuen mengoaric nehorc te stifica leçan guiçonaz: ecen berac baçaquiã cer cen guiçonean.

CAP. III.

*1 Nicodemo gauaz Christgana ethorten. 3 Vrez eta*

*Spirituz sortzea. 13 Cerura nor igan. 14 Suguea desertuan. 15, 16 Vicitze eternala. Iaincoaren amorioa. 17 Saluamendua. 18 Fedea. 19 Condemnationea. Arguia. Ilhumbea. Obrác. 22 Christ Iudean batheyatzen ari, 23 Ioannes-ere. 25 Purificationezco questionea. 33 Iaincoa eguiati. 36 Iaincoaren hirá infidelén gainean.*

1 CEn bada Phariseuetaric edoceimbat Nicodemo deitzen cenic, Iuduén arteco principaletaric bat:

Haur ethor cedin Iesusgana gauaz, eta erran cieçón, Magistruá, baceaquiagu ecen Iaincoaganic magistru ethorria aicela: ecen nehorc ecin eguin citzaquec hic eguiten dituán signo hauc, Iaincoa harequin ezpada.

3 Ihardets ceçan Iesusec eta erran cieçón, Eguiaz eguiaz erraiten drauat, berriz iayo içanen eztenec, ecin ikus deçaquela Iaincoaren resumá

4 Erran cieçón Nicodemoc, Nolatan guiçona iayo ahal daite çahar denean? ala berriz bere amáren sabelean sar eta iayo ahal daite?

5 Ihardets ceçan Iesusec, Eguiaz eguiaz erraitē drauát, vrez etaSpirituz iayo eztena, ecin sar daitela Iaincoaren resumán.

6 Haraguitic iayo dena haragui duc: eta Spiritutic iayo dena, spiritu duc.

7 Ezteçála mirets ceren erran drauadan, Berriz iayo behar çarete.

8 Haiceac nahi duen lekura diraunsac: eta haren hotsa ençuten duc: baina eztaquic nondic

heldu den ez norat ioaiten den: hala duc ſpiritutic iayo den gucia.

9 Ihardets ceçã Nicodemoc, eta erran cieçón, Nolatan gauça hauc eguín ahal daitezque?

10 Ihardets ceçan Ieſuſec, eta erran cieçón, Hi aiz Iſraeleco doctor, eta gauça hauc eztituc eçagutzen?

11 Eguiaz eguiaz erraiten drauat, ecen daquigun gauçá erraiten dugula, eta ikuſſi dugun gauçáz teſtificatzen dugula: baina gure teſtimoniagea eztuçue recebitzen.

12 Baldĩ lurreco gauçác errã badrauzquiçuet, eta ſinheſtẽ ezpadituçue? nolatan baldin ceruco gauçác erran badietzaçuet ſinhetſiren duçue?

13 Ecen nehor ezta igan cerura, cerutic iautſi dena baicen, *cein baita* guiçonaren Seme ceruän dena.

14 * Eta nola Moyſeſec altcha baitzeçan ſuguea deſertuan, hala altcha dadin behar da guiçonaren Semea: *Nom.21.9. berr.12.32*

15 Hura baithan ſinheſte duenic batre gal eztadin, baina vicitze eternala duençát.

16 * Ecen hala Iaincoac onhetſi vkan du mundua, non bere Seme bakoitza eman vkan baitu, hura baithan ſinheſten duenic gal eztadin, baina vicitze eternala duençát. *1.Ioan.4.9*

17 * Ecen eztu igorri Iaincoac bere Semea mundura, mundua condemna deçançát, baina mundua harçaz ſalua dadinçát. *Berr.9.39 eta 12.47*

18 Hura baithan ſinheſten duenic, ezta condẽnatzen: baina ſinheſten eztuena ia condemna-

tua da: ecen eztu ſinhetſi Iaincoaren Seme ba-koitzaren icenean.

*Lehen 1.9.* 19 Haur da bada condemnationea, * ecen Arguia ethorri da mũdura, baina onhetſiago dute guizonéc ilhumbea ecen ez Arguia: cerẽ hayen obrác gaichtoac baitirade.

20 Ecen gaizqui ari den guciac, gaitz daritza arguiari: eta ezta arguira ethorten, haren obrác reprehendi eztitecençat.

21 Baina bidezqui ari dena, ethorten da arguira, haren obrác manifeſta ditecençat: ceren Iaincoaren araura eguinac baitirade.

22 Guero ethor cedin Ieſus bere diſcipuluequĩ Iudeaco lurrera: eta han egoiten cen hequin, eta *Berriz 4.1* *batheyatzen ari cen.

23 Eta Ioannes-ere batheyatzẽ ari cen Enonẽ Salimgo aldean, ceren anhitz vr baitzén hã: eta ethortẽ ciradén *gendeac* eta batheyatzẽ ciraden.

24 Ecen oraino etzén eçarri içan Ioannes preſoindeguian.

25 Altcha cedin bada queſtionebat Ioanneſen diſcipuluetaric Iuduequin purificationeaz.

26 Eta ethor citecen Ioanneſgana, eta errã cieçotẽ, Magiſtruá, Iordanaz berce aldeã hirequin *Lehen 1.17 34.* cena, *ceinez hic teſtificatu baituc, hará, batheyatzẽ ari duc, eta guciac ethortẽ dituc harẽgana.

27 Ihardets ceçan Ioanneſ-ec eta erran ceçan, Ecin guiçonac recebi deçaque deus, baldin emã ezpadaquio cerutic.

28 Çuec ceuroc çaituztet teſtimonio nola er-*Lehen 1.20* ran dudan, *Ez naiz ni Chriſt, baina igorri içan

naiz haren aitzinean.

29 Sposa duena sposo da: baina sposo denaren adisquide han dena eta hura ençuten duena, haguitz alegueratzen da sposoaren vozagatic: beraz ene alegrançá complitu da.

30 Harc behar du handitu, eta nic chipitu.

31 Garaitic ethorri dena, gucién gaineco da: lurretic dena, lurreco da, eta lurreco gaucéz minço da: cerutic ethorri dena gucién gaineco da.

32 Eta cer ikussi eta ençun baitu hura testificatzen du: baina haren testimoniagea nehorc eztu recebitzen.

33 Haren testimoniagea recebitu duenac ciguilatu du *ecen Iaincoa eguiati dela. *Rom.3.4.*

34 Ecen Iaincoac igorri duena Iaincoaren hitzéz minçatzẽ da, ecen Iaincoac eztrauca neurriz emaiten Spiritua.

35 Aitác maite du Semea, *eta gauça guciac eman ditu haren escura. *Matth.11.27.*

36 *Sinhesten duenac Semea baithan, badu vicitze eternala: baina Semea obeditzẽ eztuenac, eztu ikusiren vicitzea, baina Iaincoaren hirá dago haren gainean. *Haba.2.4. 1.ioan 5.10*

CAP. IIII.

*7 Christ Samaritanari edatera esquezcuqui. 10 Vr vlcia. 22 Saluamendua Iudutaric. 23, 24 Adoratione eguiazcoa. 26 Iesus da Christ. 32 Haren viandá. 35 Vztá çorhi. 39 Samaritanoetaric anhitzec Christ baithan sinhesten. 42 Hayen confessionea. 45 Christec Galileanoac recebitzen. 46 Iaun baten semea sendatu. 54 Iesusen bigarren signoa.*

1 BAda eçagutu çuenean Iaunac nola ençun çuten Pharisеuéc ecen Iesusec discipulu guehiago eguiten çuela*eta batheyatzen,ecen ez Ioannesec:

*Leben* 3.22

2 (Iesus bera batheyatzen ari ezpacen-ere,baina haren disciрuluac)

3 Vtzi ceçan Iudea, eta ioan cedin berriz Galilearát.

4 Eta harc behar çuen iragan Samariatic.

5 Ethorten da bada Samariaco hiri Sichar deitzẽ den batetara *cein baita* *Iacob-ec bere seme Iosephi eman ceraucan possessionearen aldean.

*Gen.* 33.19 *eta* 48.22. *iosue* 24.32

6 Eta cen han Iacob-en ithurria:Iesus bada bidean vnhatua berehala iar cedin ithur bazterrean:*ecen* bacén sey orenén inguruä.

7 Ethor cedin emazte Samaritanabat vr idoquitera:erran cieçón hari Iesusec,Indan edatera.

8 Ecen haren disciрuluac ioan içan ciraden hirira iateco erostera.

9 Diotsa bada hari emazte Samaritana hunec, Nola hi Iudu aicelaric, edatera niri esquez aut, bainaiz emazte Samaritana? ecen eztié conuersationeric Iuduéc Samaritanoequin.

10 Ihardets ceçan Iesusec eta errã cieçón, Baldin bahaqui Iaincoaren dohaina,eta nor den hiri erraiten draunana,Indan edatera,hi escatu inçayqueon hari, eta eman baitzerauquenán vr vicitic.

11 Diotsa emazteac, Iauna, eztuc cerçaz idoqui deçán,eta putzua duc barna:nondic duc be-

raz vr vici hori?

12 Ala gure aita Iacob baino handiago aiz hi, ceinec eman baitraucu putzu haur, eta berac hunetaric edan baitu, eta haren haourréc, eta haren abréc?

13 Ihardets ceçan Iesusec eta erran cieçón, Vr hunetaric edaten duen gucia egarrituren dun berriz:

14 Baina norc-ere edanen baitu nic emanen draucadan vretic, eztun egarriturẽ seculan: baina nic emanen draucadan vra, eguinen dun hura baithan vr iauzten denezco ithurri, vicitze eternalecotzat.

15 Diotsa emazteac, Iauna, indac vr horretaric, egarri eznadin, eta ethor eznadin huna idoquitera.

16 Diotsa Iesusec, Habil dei eçan eure senharra, eta athor huna.

17 Ihardets ceçan emazteac eta erran cieçón, Eztiát senharric. Diotsa Iesusec, Vngui erran dun, Eztiát senharric.

18 Ecen borz senhar vkan ditun, eta orain dunana, eztun hire senhar: hori eguiaz erran dun.

19 Diotsa emazteac, Iauna, badiacussát ecen Propheta aicela hi.

20 Gure aitéc mendi hunetan adoratu vkan dié: eta çuec dioçue ecen * Ierusalemen dela lekua non adoratu behar baita. *Deut. 12.6*

21 Diotsa Iesusec, Emazteá, sinhets neçan ni, ecen ethorten dela orena noiz ezpaituçue mendi hunetan ez Ierusalemen adoraturen Aita.

2.Reg.17.29. 22 *Çuec adoratzen duçue eztaquiçuena, guc adoratzen dinagu daquiguna: ecen ſaluamendua Iuduetaric dun.

23 Baina ethorten dun orena, eta orain dun, noiz adoraçale eguiazcoéc adoraturen baitute Aita ſpirituz eta eguiaz: ecen Aita-ere halaco adoraçalén galdez diagon.

1.Cor.3.17 24 *Iaincoa dun Spiritu: eta hura adoratzen dutenéc, ſpirituz eta eguiaz adoratu behar diné.

25 Diotſa emazteac, Baceaquiat ecen Meſsiaſa ethorteco dela, Chriſt deitzē dena, harc dathorrenean declaraturē darauzquiguc gauça guciac.

26 Diotſa Ieſuſec, Ni naun *hura*, hirequin minço naicena.

27 Eta bizquitartean ethor citecen haren diſcipuluac, eta mirets ceçaten nola emazte batequin minço cen: badaric-ere nehorc etzieçón erran, Ceren galdez ago? edo, Cer minço aiz horrequin?

28 Vtzi ceçan bada bere vncia emazteac, eta ioan cedin hirira, eta erran ciecén leku hartaco gendey.

29 Çatozte, ikuſſaçue guiçon-bat ceinec erran baitrauzquit eguin ditudan gauça guciac: ezta haur Chriſt?

30 Ilki citecen bada hiritic, eta ethor citecen harengana.

31 Eta bizquitartean othoitz eguiten cerauca-ten diſcipuluéc, cioitela, Magiſtruá, ian eçac.

32 Baina harc erran ciecén, Nic viandabat dut iateco, çuec eztaquiçuenic.

33 Errajten çuten bada discipuluéc elkarren artean, Nehorc ekarri othe drauca iatera?

34 Dioste Iesusec, Ene viandá da eguin deçadan ni igorri nauenaren vorondatea, eta acaba deçadan haren obrá.

35 Eztuçue çuec erraiten, Oraino laur hilebethe dirade, eta vztá ethorriren da? *Huná, erraiten drauçuet, goititzaçue çuen beguiac, miraitzaçue bazterrac, ecen ia churitu dirade vztaren biltzeco.

*Mat. 9.37. luc 10.2.*

36 Eta vztá biltzen duenac, sari recebitzen du, eta biltzen du fructua vicitze eternaleracotzát: ereiten duenac bozcario duençát, bayeta biltzen duenac-ere.

37 Ecen hunetan erran haur eguiazco da, Bat da ereiten duena, eta bercebat biltzen duena.

38 Nic igorri çaituztet nekatu etzaretenaren biltzera: berceac nekatu içan dirade, eta çuec hayén trabailluan sarthu içan çarete.

39 Eta hiri hartaco Samaritanoetaric anhitzec sinhets ceçaten hura baithan, emazte testificatu çuenaren erranagatic, *cioela*, Eguin dudan gucia erran draut.

40 Ethorri ciradenean bada Samaritanoac, othoitz eguin cieçoten hequin egon ledin: eta egon cedin han bi egun.

41 Eta anhitzez guehiagoc sinhets ceçaten beraren hitzagatic.

42 Eta emazteari erraiten ceraucaten, Eztinagu goitiric hire erranagatic sinhestē: ecen gueuroc ençun dinagu, eta baceaquinagu ecen haur

dela eguiazqui Christ munduaren Saluadoreá.

43 Eta bi egunen buruän parti cedin handić, eta ioan cedin Galilearát.

*Matth. 13. 57. marc 6.4. luc 4.24.*

44 Ecen Iesusec berac* testifica ceçan, ecẽ Propheta batec bere herrian ohoreric eztuelá.

45 Bada ethorri içan cenean Galileara, recebi ceçaten Galileanoec, bestán Ierusalemen eguin cituen gauça guciac ikussiric: ecen hec-ere ethorri içan ciraden bestara.

*Lehen 2, 1. 12.*

46 Ethor cedin bada Iesus berriz *Cana Galileaco *hirira*, non eguin vkan baitzuen vra mahatsarno. Eta cen gorte iaun-bat, ceinen semea baitzén eri Capernaumen.

47 Haur, encunic ecen Iesus ethorri cela Iudeatic Galileara, ioan cedin harengana, eta othoitz eguin cieçon iauts ledin, eta senda lieçón bere semea: ecen hiltzera cioan.

48 Erran cieçón orduan Iesusec, Signoac eta miraculuac ikus ezpaditzaçue, ezteçaqueçue sinhets.

49 Diotsa gorte iaun harc, Iauna, iautsi adi ene semea hil dadin baino lehen.

50 Diotsa Iesusec, Habil: hire semea vici duć. Eta sinhets ceçan guiçonac Iesusec erran ceraucan hitza eta ioan cedin.

51 Eta ia hura iausten cela *bere* cerbitzariac bat cequizquion, eta conta cieçoten, cioitela, Hire semea vici duc.

52 Orduan galdeguin ciecén, cer orenez hobequi eriden içan cen: eta erran cieçoten, Atzo çazpi orenetan vtzi cian helgaitzac.

53 Eçagut ceçan bada aitác ecen oren hartan cela Iesusec errá ceraucana, Hire semea vici duc. Eta sinhets ceçan berac, eta haren etche guciac.
54 Bigarren signo haur berriz eguin ceçan Iesusec ethorri içan cenean Iudeatic Galileara.

CAP. V.

*2 Ikuzgarria. 4 Ainguerüäc vra vherritzen. 5 Paralyticoa sendatu. 16 Christ Iaincoaren Semea Iuduéc hil nahi. 21 Hilén resuscitatzea eta viuificatzea. 23 Ohoratzeco Christ Aita beçala. 24 Sinhesten duenac, vicitze eternala du. 25, 29 Vicitzezco resurrectionea. 30 Christen eta Aitaren vorondatea. 32 Christec testificatzen. 35 Ioannes candela vicia. 36 Christen obrác Christen testimonio. 39 Scripturac. 41 Guiçonen gloriá. 42 Iaincoaren amorioa. 46 Moysesec Christez scribatu.*

1 GAuça hauen ondoan, *Iuduén bestabat cen, eta igan cedin Iesus Ierusalemera.

*Leuit. 23. 5 deut. 16. 1.*

2 Eta da Ierusalemen ardi plaçán ikuzgarribat Hebraicoz Beth-esda deitzen denic, borz galeria dituenic.
3 Hetan cetzan eri, itsu, maingu, membro eyhardun mulço handia, vraren higuitzearen beguira ceudela.
4 Ecen Ainguerubat iausten cen ordu iaquinez ikuzgarrira, eta vra vherritzen çuen: eta vraren vherritze ondoan lehen *hartara* iausten cena sendatzen cen, cer-ere eritassunec baitzaducan.
5 Eta cen guiçon-bat han hoguey eta hemeçortzi vrthez erharçunac çaducanic.

6 Haur ikus ceçanean Iesusec cetzala, eta eçaguturic ecen ia dẽbora lucea çuela, diotsá, Nahi aiz sendatu?

7 Ihardets cieçón eriac, Iauna, eztiat norc, vra vherritu denean, eçar neçan ikuzgarrira: baina ni ethorten naicen bizquitartean, bercebat ene aitzinean iausten duc.

8 Diotsa Iesusec, Iaiqui adi, altcha eçac eure ohea, eta ebil adi.

9 Eta bertã senda cedin guiçon hura: eta altcha ceçan bere ohea, eta baçabilan: eta cen Sabbathoa egun hartan.

10 Erran cieçoten bada Iuduéc sendatu içan cenari, Sabbathoa duc, *eztuc sori ohea eraman deçán.

*Hiere.17. 21.*

11 Ihardets ciecén, Norc ni sendatu bainau, harc erran draut, Altcha eçac eure ohea eta ebil adi.

12 Orduan interroga ceçaten, Nor da hiri erran drauan guiçon hura, Altcha eçac eure ohea eta ebil adi?

13 Eta sendatu içan cenac, etzaquian nor cen: ecen Iesus apparta cedin leku hartan cen gendetzetic.

14 Guero eriden ceçan hura Iesusec templean, eta erran cieçón, Huná, sendatu aiz: guehiago bekaturic eztaguiala, cerbait gaizquiago hel eztaquián:

15 Ioan cedin guiçon haur, eta conta ciecén Iuduey ecẽ Iesus cela hura sendatu vkan çuena.

16 Eta halacotz persecutatzen çutén Iuduéc Iesus,

Iesus, eta hura hil nahiz çabiltzan, ceren gauça hauc eguin baitzituen Sabbathoan.

17 Baina Iesusec ihardets ciecén, Ene Aitac oraindrano obratzen du, eta nic-ere obratzen dut.

18 *Halacotz bada Iuduac hura hil nahiz haguitzago çabiltzan, ez solament ceren Sabbathoa hautsi çuen, baina are *ceren* harē Aita Iaincoa cela erran baitzuen, bere buruä Iaincoaren bardin eguinez.

Berr.7.19.

19 Ihardets ceçan bada Iesusec, eta erran ciecén, Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, ecin daidi Semeac bere buruz deus, *erran nahi da*, baldin ikussi ezpadu Aitá obratzen: ecen cer-ere harc eguiten baitu, hura Semeac-ere halaber eguiten du.

20 Ecen Aitác maite du Semea, eta berac eguiten dituen gauça guciac eracusten drauzca, eta hauc baino obra handiagoac eracutsiren drauzca hari, çuec mirets deçaçuençát.

21 Ecen nola Aitac resuscitatzen baititu hilac eta viuificatzen, halaber Semeac-ere nahi dituenac viuificatzen ditu.

22 Ecen Aitac eztu iugeatzen nehor, baina iugemendu gucia eman drauca Semeari:

23 Guciéc Semea ohora deçatençát, Aita ohoratzen duten beçala: Semea ohoratzen eztuenac, eztu ohoratzen Aita, ceinec igorri baitu hura.

24 Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, ecen ene hitza ençuten, eta ni igorri nauena sinhesten

duenac, baduela vicitze eternala, eta *haina* ezta condemnationetara ethorriren: baina iragan da heriotic vicitzera.

25 Eguíaz eguiaz erraiten drauçuet, ecen ethorten dela orena, eta orain dela, noiz hiléc ençunen baitute Iaincoaren Semearen voza, eta ençunen dutenac vicico dirade.

26 Ecen nola Aitac baitu vicitze bere baithan, hala eman drauca Semeari-ere bere baithan vicitzearen vkaitea.

27 Eta bothere eman drauca iugemendu-ere eguiteco, guiçonaren Seme den becembatean.

28 Ezteçaçuela mirets haur: ecen ethorriren da orena ceinetan monumentetaco guciéc ençunen baitute haren voza.

*Matth.25. 35,41.* 29 *Eta ilkiren dirade vngui eguin duqueitenac, vicitzeco resurrectionera: baina gaizqui eguin duqueitenac, condemnationeco resurrectionera.

30 Ecin daidit nic neure buruz deus: dançudan beçala iugeatzen dut: eta ene iugemendua iusto da: ecen eznabila neure vorondatearen ondoan: baina ni igorri nauen, Aitaren vorondatearen ondoan.

*Berr.8.14.* 31 *Baldin nic testificatzen badut neure buruäz, ene testimoniagea ezta sinhesteco.

*Mat.3.17.* 32 *Bercebat da testificatzen duenic niçaz, eta badaquit ecen eguiazco dela niçaz testificatzen duen testimoniagea.

*Lehen 1.27* 33 *Çuec igorri vkan duçue Ioannesgana, eta harc testimoniage eman drauca eguiari.

34 Baina nic eztut guiçonaganic teſtimoniageric recebitzen : baina gauça hauc erraiten ditut çuec ſalua çaitezten çát.

35 Hura cen candela çachecana eta argui eguiten çuena:eta çuec nahi içan çarete appur-batetacotz alegueratu haren arguian.

36 Baina nic Ioanneſena baino teſtimoniage handiagoa dut : ecen niri Aitac compli ditzadançat eman drauzquidan obréc, nic eguiten ditudan obra beréc teſtificatzen duté niçaz ecen Aitac igorri vkan nauela.

37 *Eta ni igorri nauen Aitac berac teſtificatu du niçaz. Eztuçue haren voza egundano ençun, *ezeta haren irudia ikuſſi.

*Mat. 3.17. eta 17.5.*

*Deut. 4.12*

38 Eta eztuçue haren hitza çuec baithan egoiten dela : ecen nor harc igorri baitu, hura çuec eztuçue ſinheſten.

39 Informa çaitezte diligētqui Scripturetaric; ecen çuec vſte duçue hetan vicitze eternala duçuela : eta hec dirade niçaz teſtificatzen dutenac.

40 Eta etzarete ethorri nahi enegana, vicitzea duçuença.

41 Gloriaric guiçonetaric eztut hartzen.

42 Baina eçagutzen çaituztet ecen Iaincoaren amorioa eztuçuela çuec baithan.

43 Ni ethorri naiz neure Aitaren icenean, eta eznauçue recebitzen:baldin bercebat ethor badadi bere icenean,hura recebituren duçue.

44 Nolatan çuec ſinhets ahal deçaqueçue, batac berceaganic gloria recebitzen duçuelaric,

Ber.12.43. eta * Iaincoaganic beraganic heldu den gloriá ezpaituçue bilhatzen?

45 Eztuçuela vſte ecen nic accuſaturen çaituztedala çuec Aita baithan: bada norc accuſa çaitzaten, Moyſes, ceinetan çuec ſperança baituçue.

46 Ecen baldin Moyſes ſinheſten bacindute, ſinhetz nindiroqueçue ni: * ecen niçaz harc ſcribatu vkan du.

Gen.3.15. eta 22.28. eta 49.10. deut.18.15

47 Baina baldin haren ſcribatuac ſinheſten ezpadituçue, nolatá ene hitzac ſinhetſirẽ dituçue.

## CAP. VI.

2, 14 *Borz oguiezco miraculua.* 15 *Chriſtec regue içatera refuſatzen.* 19 *Itſas gainez Chriſt ebili.* 28, 29 *Iaincoaren obrá.* 30 *Populua ſigno eſquez euqui.* 31 *Manná.* 33, 48 *Chriſt ogui vicitzecoa.* 37, 65 *Harengana ioaitea.* 38 *Certara Chriſt iautſi.* 40, 47 *Hura baithango ſinheſtea, vicitze eternal eta reſurrectione.* 41 *Iuduac Chriſtez ſcandalizatzen.* 44 *Chriſt baithan ſinheſtea.* 51 *Haren haraguiaren iatea eta odolaren edatea.* 60 *Diſcipuluac ſcandalizatu.* 66 *Baizu Chriſtganic retiratu.* 68 *Apoſtoluén confeſſionea.* 70 *Iudas deabru.*

1 GVero ioan cedin Ieſus Galileaco itſaſſoaz berce aldera, Tiberiacora.

2 Eta iarreiquiten çayón gendetze handia, ceren ikuſten baitzituzten harc erién gainean eguiten cituen ſignoac.

3 Orduan igan cedin mendi batetara Iesus, eta han iar cedin bere discipuluequin.

4 Eta hurbil cen Bazco, *Iuduen bestá.

5 *Bada beguiac altchatu cituenean Iesusec eta ikussi çuenean ecen gendetze handia ethorten cela harengana, diotsa Philipperi, Nondic erossiren dugu ogui, hauc ian deçatençat?

Leuit.23.7 deut.16.1. Matth.14.16. marc 6.38. luc 9.13.

6 (Baina haur erraiten çuen haren enseyatzeagatic, ecen berac baçaquian, cer eguiteco çuen)

7 Ihardets cieçón Philippec, Ber-ehun dinerore oguiaz ezliqueye asco, den gutiena batberac har leçan.

8 Diotsa bere discipuluetaric batec, Andriu Simon Pierrisen anayeac.

9 Baduc hemen muthilcobat, dituenic borz ogui garagarrezcoric, eta bi arrain: baina hauc cer dirade hambaten arteco?

10 Eta erran ceçan Iesusec, Iar eraci eçaçue gendea. Eta cen belhar handi leku hartan. Iar citecen bada borz milla guiçonen contuaren inguruä.

11 Eta har citzan Iesusec oguiac: eta gratiac rendaturic parti cietzén discipuluey: eta discipuluéc iarriric ceudeney: halaber arrainetaric-ere nahi çuten becembat.

12 Eta ressasiatu içan ciradenean erran ciecén bere discipuluey, Bil itzaçue soberatu diraden çathiac, deus gal eztadin.

13 Bil citzaten bada, eta bethe citzaten hamabi sasqui çathiz, borz ogui garagarrezcoetaric, ian çuteney soberaturic.

14 Gende hec bada ikuſſi çutenean Ieſuſec eguin çuen miraculua, erraiten çutén, Haur da eguiazqui mũdura ethorteco cen Propheta hura.

15 Ieſuſec bada eçaguturic ecen haren harrapatzera ethorteco ciradela hura regue eguin leçatençát, retira cedin berriz mendira ber-bera.

*Matth. 14. 23. marc 6. 47.*

16 *Eta arratſa ethor cedinean, iauts citecen haren diſcipuluac itſaſſora.

17 Eta ſarthuric vncira, ioaitẽ ciraden itſaſſoaz berce aldera Capernaum alderát: eta ia ilhuna cen, eta etzén Ieſus hetara ethorri.

18 Eta itſaſſoa, haice handic erauntſiz altchatzen cen.

19 Bada hoguey eta borz, edo hoguey eta hamar ſtade beçala abiroina tiratu ondoan, ikuſten dute Ieſus itſas gainez dabilala, eta vnciari hurbiltzen çayola, eta ici citecen.

20 Eta harc erran ciecén, Ni naiz, etzaretela beldur.

21 Nahi vkan çutén bada hura vncira recebitu: eta bertan vncia arriba cedin ioaiten ciraden lekura.

22 Biharamunean itſaſſoarẽ berce aldetic gueldituric cegoen gendetzeac ikuſſi duenean ecen berce vncitchoric etzela han bat baicen, ceinetara haren diſcipuluac ſarthu içan baitziraden, eta etzela ſarthu bere diſcipuluequin Ieſus vncitchora, baina haren diſcipuluac berac ioan içan ciradela:

23 Eta Tiberiadetic berce vncitchoric ethorri cela leku *haren* aldera non oguia ian vkan bai-

tzutén,gratiac rendaturic Iaunac.
24 Ikus ceçanean bada gendetzeac ecen Iesus etzela han,ez haren disciпuluac,sar citecen hecere vncietara,eta ethor citecen Capernaumera, Iesus bilhatzen çutela.
25 Eta hura eridenic itsassoaren berce aldean, erran cieçotē,Magistruá,noiz huna ethorri aiz?
26 Ihardets ciecén Iesusec, eta erran ceçan, Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, ene bilha çabiltzate, ez ceren miraculuac ikussi dituçuen, baina ceren ian baituçue oguietaric,eta ressasiatu içan baitzarete.
27 Trabailla çaitezte ez vianda galtzen denagatic, baina vicitze eternalecotzat irauten duenagatic, cein guiçonaren Semeac emanen baitrauçue:*ecen *Seme* haur Iainco Aitac ciguilatu vkan du.
28 Erran cieçoten bada, Cer eguinen dugu eguin ditzagunçat Iaincoaren obrác?
29 Ihardets ceçan Iesusec, eta erran ciecén, *Haur da Iaincoarē obrá,sinhets deçaçuen harc igorri duena baithan.
30 Orduan erran cieçoten,Cer signo bada hic eguiten duc, dacussagunçát eta hi sinhets eçagun?cer obra eguiten duc?
31 Gure aitéc ian vkan dié manná desertuan: scribatua den beçala, *Cerutico oguia eman draue iatera.
32 Erran ciecén bada Iesusec, Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, eztrauçue Moysesec emā cerutico oguia: baina ene Aitac emaiten drauçue

*Leben* 1.32 *mat*.3.17. *eta* 17.5

1.*Ioā* 3.23.

*Exo*.16.14. *nom*.11.7. *psal*.78.24. *sap*.16.20.

cerutico ogui eguiazcoa.

33 Ecen Iaincoaren oguia da cerutic iautſi dena, eta munduari vicitze draucana.

34 Erran cieçoten bada, Iauna, eman ieçaguc bethiere ogui hori.

35 Eta erran ciecén Ieſuſec, Ni naiz vicitzeco oguia: enegana ethorten dena, ezta goſſeturen: *eta ni baithan ſinheſten duena, ezta egarrituren iagoitic.

Eccl.24.29

36 Baina erran drauçuet, ecen ikuſſi-ere banuçuela, eta eztuçue ſinheſten.

37 Aitac emaiten drautan gucia, enegana ethorriren da, eta enegana ethorten dena, eztut campora iraitziren.

38 Ecen cerutic iautſi içan naiz eguin deçadençát ez neure vorondatea, baina ni igorri nauenaren vorondatea.

39 Eta haur da ni igorri nauenaren vorondatea, Aitarena, cerere eman baitraut, ezteçadan gal hartaric, baina reſuſcita deçadã hura azquen egunean.

40 Halaber haur da ni igorri nauenaren vorondatea, Semea ikuſten eta hura baithan ſinheſten duen guciac, duen vicitze eternala, eta nic reſuſcitaturen dut hura azquen egunean.

41 Murmuratzen çutén bada Iuduéc harçaz, ceren erran baitzuen, Ni naiz cerutic iautſi naicen oguia.

Math.13.55.

42 Eta erraitẽ çutén, *Ezta haur Ieſus, Ioſephen ſemea, ceinen aita eta ama guc eçagutzen baititugu? Nola dio bada hunec, Cerutic iautſi naiz?

43 Ihardets ceçan bada Iesusec eta erran ciecén, Ezteçaçuela murmura çuen artean.

44 Nehor ecin dathor enegana, baldin ni igorri nauen Aitac tira ezpadeça: eta nic resuscitaturen dut hura azquen egunean.

45 Scribatua da Prophetetan, * Eta içanen dirade guciac Iaincoaz iracatsiac. Norc-ere beraz ençun baitu Aitaganic eta ikassi, *hura* ethorten da enegana.

*Esa.54.13. hiere.31.33*

46 Ez Aita ikussi duenez nehorc, *Iaincoaganic denac baicen: harc ikussi du Aita.

*Matth.11.27.*

47 Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, ni baithan sinhesten duen guciac badu vicitze eternala.

48 Ni naiz vicitzeco oguia.

49 Çuen aitéc ian vkan duté* manná desertuã, eta hil içan dirade.

*Exo.16.15*

50 Haur da oguia cerutic iautsi dena, hunetaric ianen duena hil eztadinçát.

51 Ni naiz ogui vicia cerutic iautsi naicena: nehorc ian badeça ogui hunetaric, vicico da eternalqui, eta nic emanen dudan oguia, ene haraguia da, nic munduaren vicitzeagatic emanen dudana.

52 Baciharducaten bada Iuduéc elkarren artean, erraiten çutela, Nolatan hunec guri *bere* haraguia eman ahal dieçaquegu iatera?

53 Orduan erran ciecén Iesusec, Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, baldin ian ezpadeçaçue guiçonaren Semearen haraguia, eta edan ezpadeçaçue haren odola, eztuçue vicitzeric çuec baithan.

1. *Cor.* 11. 37

54 * Iaten duenac ene haraguia, eta edaten ene odola, badu vicitze eternala: eta nic dut resuscitaturen hura azquen egunean.

55 Ecen ene haraguia eguiazqui da vianda, eta ene odola eguiazqui da edari.

56 Ene haraguia iaten duena, eta ene odola edaten, nitan egoiten da, eta ni hartan.

57 Nola ni igorri bainau Aita vici denac, eta ni vici bainaiz *neure* Aitaz: hala ni ianen nauena ere, vicico da hura-ere niçaz.

58 Haur da ogui cerutic iautsi içan dena: ez çuen aitéc manná ian duten beçala, eta hil içã dirade: ogui haur ianẽ duena vicico da eternalqui.

59 Gauça hauc erran citzan synagogán iracasten ari cela Capernaumen.

60 Haren discipuluetaric bada anhitzec gauça hauc ençunic erran ceçaten, Gogor da hitz haur: norc ençun ahal deçaque?

61 Çaquialaric bada Iesusec bere baithan ecen haren discipuluéc huneçaz murmuratzẽ çutela, erran ciecén, Hunec scandalizatzen çaituzte?

62 *Cer date* bada baldin ikus badeçaçue guiçonaren Semea igaiten *lehen cen lekura?

*Lehen* 3.13

63 Spiritua da viuificatzen duena, haraguiac eztu deus probetchatzen: nic erraiten drauzquiçuedan hitzac spiritu dirade eta vicitze.

64 Baina badirade batzu çuetaric sinhestẽ eztutenic. Ecen baçaquian hatseandanic Iesusec cein ciraden sinhesten etzutenac, eta cein cen hura tradituren çuena.

65 Eta erraiten çuen, Halacotz erran drauçuet

çecen nehor ecin dathorrela enegana, baldin ene Aitaz eman ezpaçayo.

66 Orduandanic haren diſcipuluetaric anhitz guibelerat citecen: eta guehiagoric etzabiltzan harequin.

67 Erran ciecén bada Ieſuſec hamabiey, Ala çuec-ere ioan nahi çarete?

68 Ihardets cieçón bada Simon Pierriſec, Iauna, norengana ioanen gara? vicitze eternalezco hitzac dituc *hic*:

69 Eta guc ſinhetſi eta eçagutu diagu ecen, *hi aicela Chriſt Iainco viciaren Semea.

*Matth. 16. 16.*

70 Ihardets ciecén Ieſuſec, Etzaituztet nic hamabi elegitu, eta çuetaric bat deabru baita?

71 Eta *haur* erraiten çuen Iudas Iſcariot Simonen *ſemeaz*: ecen haur cen hura traditu behar çuena, hamabietaric bat bacen-ere.

## CAP. VII.

2 *Tabernaclen beſtá.* 5 *Chriſten ahaideac.* 7 *Cergatic hari Munduac gaitz eritzi.* 12 *Harçaz gendéc cer opinione.* 14 *Chriſt iracaſten ari.* 16 *Haren doctriná.* 24 *Iuſtoqui iugeatzeco.* 30 *Chriſten orena.* 31 *Anhitzec hura baithan ſinheſten.* 32 *Haren hartzera igorri officierac.* 39 *Spiritu ſaindua.* 40 *Chriſtez ihardu qui.* 47 *Phariſeuén arrogantia.* 51 *Nicodemoren reſpoſta.*

1 ETa guero baçabilan Ieſus Galilean: ecen etzén Iudean ebili nahi, ceren Iuduac baitzabiltzan hura hil nahiz.

2 Eta hurbil cẽ Iuduén beſtá *ta-

*Leuit. 23. 34.*

bernaclén deitzen cena.

3 Erran cieçoten bada bere anayéc, Parti adi hemendic eta habil Iudearát, hire diſcipuluec-ere ikus ditzatençát hire obra eguiten dituanac.

4 Ecen nehorc eztic deus ſecretuan eguiten, eſtimationetan içan nahiz dabilanec, baldin gau ça hauc eguiten badituc, manifeſta ieçoc eure buruä munduari.

5 Ecen are haren anayec-ere etzuten ſinheſten hura baithan.

6 Dioſte bada Ieſuſec, Ene demborá ezta oraino ethorri: baina çuen demborá bethi da preſt.

7 Ecin munduac gaitzets çaitzaquezte çuec: baina niri gaitz darizt: ceren nic teſtificatzen baitut harçaz, ecen haren obrác gaichto diradela.

8 Çuec igan çaitezte beſta hunetara: ni eznaiz oraino igaiten beſta hunetara,* ceren ene demborá ezpaita oraino bethe.

*Berriz 8. 20.*

9 Eta gauça hauc erran cerauztenean egon cedin Galilean.

10 Eta igan ciradenean haren anayeac, orduan hura-ere igan cedin beſtara, ez aguerriz, baina ichilic beçala.

11 Iuduéc bada bilhatzen çuten hura beſtán, eta erraiten çuten, Non da hura?

12 Eta murmuratione handia cen populuaren artean harçaz: ecen batzuc erraiten çuten *Guiçon* ona da: eta bercéc erraiten çutén, Ezta: baina ſeducitzen du populua.

13 Badaric-ere nehor frangoqui etzén minço

harçaz, Iuduén beldurrez.

14 Eta bestá ia erdi iragan cenean, igan cedin Iesus templera, eta iracasten ari cen.

15 Eta miraz ceuden Iuduac, cioitela, Nolatan hunec letrác daquizqui, ikassi gabe?

16 Ihardets ciecén Iesusec, eta erran ceçã, Ene doctriná ezta enea, baina ni igorri nauenarena.

17 Baldin nehorc nahi badu haren vorondatea eguin, eçaguturen du doctrináz, eya Iaincoaganic denez, ala ni neure buruz minço naicenez.

18 Bere buruz minço dena, *bere* gloriaren bilha dabila: baina bera igorri duenaren gloriaren bilha dabilana, da eguiati, eta iniustitiaric hura baithan ezta.

19* Eztrauçue Moysesec eman Leguea? eta ezpaitu çuetaric batec-ere obratan eçartẽ Leguea? *Cergatic çabiltzate ni hil nahiz?

*Exod. 24.3*

*Leben 5.18*

20 Ihardets ceçan populuac eta errã, Deabrua duc *hic*: nor dabila hi hil nahiz?

21 Ihardets ceçan Iesusec eta erran ciecén, Obrabat eguin dut, eta guciac miraz çaudete.

22 Baina halere *Moysesec eman drauçue Circoncisionea, (ez Moysesganic denez, *baina Aitetaric) eta Sabbathoan circonciditzen duçue guiçona.

*Leuit. 12.3*
*Gen. 17.10*

23 Baldin Circoncisionea recebitzẽ badu guiçonac Sabbathoan, Moysesen Leguea hauts eztadinçát: asserre çarete ene contra ceren guiçon-bat ossoqui sendatu dudan Sabbathoan?

24 *Ezteçaçuela iugea apparentiarẽ araura, baina iugemendu bidezco batez iugea eçaçue.

*Deut. 1.16*

25 Erraiten çutén bada Ierusalemetar batzuc, Ezta haur hiltzeco bilhatzen dutena?

26 Eta huna, frangoqui minço da, eta eztraucate deus eguiten: ala eguiazqui eçagutu othe luqueite Gobernadoréc, ecen haur dela eguiazqui Christ?

27 Baina haur badaquigu nondic den: baina Christ dathorrenean, nehorc eztu iaquiñe nondic daten.

28 Oihuz cegoen bada Iesus templean, iracasten çuela eta erraiten, Eta ni nauçue eçagutzé, eta nondic naicén badaquiçue, eta neure buruz eznaiz ethorri, baina da eguiati ni igorri nauena, cein ezpaituçue çuec eçagutzen.

29 Baina nic eçagutzen dut hura, ceren harenganic bainaiz, eta harc igorri bainau.

30 Orduan hura hatzaman nahiz çabiltzan: baina nehorc etzitzan escuac eçar haren gaineã, ecen etzén oraino ethorri haren orena.

31 Eta gendetzecoataric anhitzec sinhets ceçaten hura baithan, eta erraiten çutén, Christec dathorrenean guehiago miraculu eguinen othe du, hunec eguiten dituenac baino?

32 Ençun ceçaten Phariseuéc gendetzea hauén gainean harçaz murmuratzen: eta igor citzaten Phariseuéc eta Sacrificadore principaléc officierac hura hatzaman leçatençát.

33 Erran ciecén bada Iesusec, Oraino dembora gutibatetacotz çuequin naiz, guero banoa igorri nauënaganát.

Berriz. 13. 33.

34 * Bilhaturen nauçue eta ez eridenen: eta nón

ni içanen bainaiz, *hara* çuec ecin ethor çaitezquete.

35 Erran ceçaten bada Iuduéc elkarren artean, Norat haur ioaiteco da, guc ezpaitugu eridenē? ala Grecoén artean barreyatuac diradenetarat ioaiteco da, eta Grecoén iracaſtera?

36 Ceric da erran duen propos haur, Bilhaturen nauçue, eta ez eridenen: eta non ni içanen bainaiz, *hara* çuec ecin ethor çaitezquete?

37 * Eta beſtaco azquen egun handian eriden cedin Ieſus han, eta oihuz cegoen, cioela, Baldin nehor egarri bada, bethor enegana eta edā beça

Leuit. 23. 36.

38 * Ni baithan ſinheſten duenari, Scripturác dioen beçala, vr vicizco fluuioac iariaturē çaizca bere ſabeletic.

Eſa. 55. 1.

39 (Eta haur erraiten çuen hura baithan ſinheſten çutenéc* recebitzeco çuten Spirituáz: ecen oraino Spiritu ſaindua etzén *eman*, ceren Ieſus oraino ezpaitzén glorificatu)

Ioel 2. 28. act. 2. 17.

40 Anhitzec bada gendetzecoetaric propos haur ençun çutenean, erraiten çuten, * Haur da eguiazqui Propheta hura.

Deu. 18. 15

41 Bercéc erraiten çutén, Haur da Chriſt. Eta batzuc erraiten çutén, Alabaina Galileatic ethorriren da Chriſt?

42 * Eztu Scripturac erraiten, ecen Dauid-en hacitic, eta Bethlehemgo Dauid egoitē cen burgutic Chriſt ethorriren dela?

Mich. 5. 2. mat. 2. 5.

43 Diſſenſione eguin cedin bada populuaren artean harengatic.

44 Eta hetaric batzuc nahi çuten hatzaman,

baina nehorc etzitzan eçar haren gaineã eſcuác

45 Ethor citecen bada officierac Sacrificadore principaletara eta Phariſeuetara, eta hec erran ciecén, Cergatic eztuçue hura ekarri?

46 Ihardets ceçaten officieréc, Egundano ezta hala minçatu guiçonic, nola guiçon haur.

47 Halacotz ihardets ciecen Phariſeuéc, Ezothe cinatezte çuec-ere ſeducitu?

48 Ala Gobernadoretaric edo Phariſeuetaric batec-ere ſinhetſi du hura baithan?

49 Baina populu Leguea cer den eztaquian haur, maradicatua da.

*Lehen 3.2.* 50 Dioſte Nicodemo*harẽgana gauaz ethorri içan cenac, cein baitzén hetaric bat,

51 Ala gure Legueac condemnatzen du nehor, bera behin ençun gabe,* eta cer eguin duẽ eçagutu gabe? *Deut.17.8 eta 19.15*

52 Ihardets ceçaten eta erran cieçoten, Ezaiz hi-ere Galileaco? informadi, eta iaquic ecen Galileatic Prophetaric eztela ilki.

52 Eta itzul cedin batbedera ceĩ bere etcherát.

## CAP. VIII.

*3 Emazte adulterioan hatzamana. 12 Chriſt munduaren arguia. 13, 18 Teſtimoniage bere buruäz ekarten. 15 Nehor ez harc iugeatzen. 23 Hura ez mũ du hunetaric. 24 Sinheſten eztuena, bekatutan hilen. 25 Chriſt nor. 28 Bere herioa Chriſtec aitzinetic erraiten. 30 Iudu batzuc ſinheſten. 32 Eguiac libre eguiten. 34 Bekatuarẽ cerbitzari nor. 37, 39 Abrahamen haour. 42 Iaincoaren haour. 44 Deabruaren haour. 57 Chriſt Abraham baino lehen. 59 Iuduéc Chriſt lapidatu nahi.*

Baina

1 BAina Iesus ioan cedin Oliuatzetaco mendirát.
2 Eta arguiaren beguian berriz ethor cedin templera, eta populu gucia ethor cedin harēgana:eta i arriric cegoela iracasten cituen hec.
3 Orduan duté ekarten harengana Scribéc eta Phariseuéc emazte adulterioan hatzaman-bat: eta hura artean eçarriric,
4 Diotsate,Magistruá,emazte haur hatzaman içan duc adulterioco eguitate berean.
5 * Eta Leguean Moysesec manatu diraucuc hunelacoac lapida ditecen:hic bada cer dioc? *Leuit. 20. 10.*
6 Eta haur erraiten çuten hura tentatzē çutela, hura cerçaz accusa lutençát. Baina Iesusec beheiti gurthuric erhiaz scribatzen çuen lurrean.
7 Eta haren interrogatzez perseueratzen çutela,chuchenduric erran ciecén,* Çuetaric bekatu gabe denac,lehenic horren contra harria aurdigui beça. *Deut. 17. 7*
8 Eta berriz gurthuric scribatzen çuē lurrean.
9 Bada hori ençun çutenean,cōscientiac accusatzen cituela,bata bercearen ondoan ilkiten ciradē çaharrenetaric haßiric azquenetarano: eta Iesus bera gueldi cedin,eta arteā cegoē emaztea
10 Eta chuchendu cenean Iesusec nehor etzacussanean emaztea baicen, erran cieçón hari, Emazteá,non dirade hire accusaçaleac? nehorc ezau condemnatu?
11 Eta harc erran ceçan,Ez nehorc,Iauna. Eta erran cieçón Iesusec, Ezaut nic-ere condemna-

tzen:oha,eta guehiago bekaturic eztaguinala.

12 Berriz bada Iesus minça cequien, cioela, *Ni naiz műduaren arguia: niri darreitana ezta ilhumbean ebiliren, baina vkanen du vicitzeco arguia.

Lehē 1.5.9 berriz 9.5.

13 Erran cieçoten bada Phariseuéc, Hic eure buruäz testificatzen duc,hire testimoniagea eztuc sinhesteco.

14 Ihardets ceçan Iesusec eta errã ciecén,*Nic neurorçaz testificatzenagatic sinhesteco da ene testimoniagea:ecē badaquit nondic ethorri naicén,eta norat ioaiten naicē:baina çuec eztaquiçue nődic ethortē naicen,ez norat ioaitē naicén

Lehen 5.31

15 Çuec haraguiaren arauez iugeatzen duçue, nic eztut iugeatzen nehor.

16 Eta baldin iugea badeçat-ere nic, ene iugemendua eguiazco da: ecen eznaiz neuror,baina ni eta ni igorri nauen Aita.

17 Baina çuen Leguean-ere scribatua da, ecen *bi guiçonen testimoniagea sinhesteco dela.

Deut. 17.6 eta 19.15. mat. 18.16 2.cor. 13.1. heb. 10.18.

18 Ni naiz neurorçaz testificatzen dudana, eta testificatzen du niçaz ni igorri nauen Aitac.

19 Erraiten ceraucatē bada, Non da hire Aita? Ihardets ceçan Iesusec,Ez ni nauçue eçagutzē, ez ene Aita:baldin ni eçagutzen baninduçue,ene Aita-ere eçagut cindeçaquete.

20 Hitz hauc erran citzan Iesusec thesaureriã, iracasten ari cela templeã: eta nehor etzaquión lot,ceren oraino ezpaitzén ethorri haren orena

21 Erran ciecén bada berriz Iesusec, Ni banoa eta bilhaturen nauçue,eta çuen bekatuan hilen

çarete: norat ni ioaiten bainaiz, çuec ecin ça-
tozquete.
22 Erraiten çuten bada Iuduéc, Berac hilen o-
the du bere buruä?erraiten baitu, Norat ni ioai-
ten bainaiz, çuec ecin çatozquete.
23 Orduan erran ciecén, Çuec beheretic çare-
te, ni garaitic: çuec mundu hunetaric çarete, ni
ez naiz mundu hunetaric.
24 Halacotz erran drauçuet ecen çuẽ bekatu-
etan hilẽ çaretela. Ecẽ baldin ſinhets ezpadeça-
çue ni naicela *hura*, çuẽ bekatuetã hilen çarete.
25 Erran cieçoten bada, Hi nor aiz? Orduan er
ran ciecén Ieſuſec, Hatſeandanicoa, badiotſuet.
26 Anhitz gauça dut çueçaz minçatzeco eta
iugeatzeco: baina ni igorri nauena eguiati da: e-
ta nic harenganic ençun ditudan gauçác mun-
duari erraiten drauzquiot.
27 Etzeçaten eçagut ecẽ Aitaz minço çayela.
28 Erran ciecén bada Ieſuſec, Altchatu duque-
çuenean guiçonaren Semea, orduan eçagutu-
ren duçue ecen ni naicela *hura*, eta neure buruz
eztudala deus eguiten, baina Aitac iracatſi na-
uen, beçala gauça hauc erraiten ditudala.
29 Ecen ni igorri nauena enequin da: eznau v-
tzi neuror Aitac, ceren nic haren gogaraco gau-
çác eguiten baititut bethiere.
30 Gauça hauc harc erraiten cituela, anhitzec
ſinhets ceçaten hura baithan.
31 Orduan erraiten cerauen Ieſuſec hura ſin-
hetſi vkan çuten Iuduey, Baldin çuec perſeuera
badeçaçue ene hitzean, eguiazqui ene diſcipulu

içanen çarete.

32 Eta duçue eçaguturen Eguiá, eta Eguiác çuec libre eguinen çaituzte.

33 Ihardets cieçoté, Abrahamen hacia gaituc, eta nehor eztiagu cerbitzatu egundano: nola dioc hic gu libre içanen garela?

34 Ihardets ciecén Iesusec, Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet ecen bekatua eguiten duen gucia *bekatuaren cerbitzari dela.

*Rom.6.20. 2.pier.2.19*

35 Eta cerbitzaria ezta egoiten bethierecotz etchean, semea dago bethierecotz.

36 Bada baldin Semeac çuec libre eguin baçaitzate, eguiazqui libre içanen çarete.

37 Badaquit ecen çuec Abrahamen hacia çaretela: baina ni hil nahiz çabiltzate, ceren ene hitzac ezpaitu lekuric çuec baithan.

38 Nic erraiten dut neure Aita baithan ikussi dudana: eta çuec eguiten duçue çuen aita baithá ikussi duçuena.

39 Ihardets ceçaten eta erran cieçoten, Gure aita, Abraham duc. Dioste Iesusec, Baldin Abrahamen haour bacinete, Abrahamē obrác eguin cinçaqueizte.

40 Orain bada ni hil nahiz çabiltzate, bainaiz, Iaincoaganic ençun dudan eguia erran drauçudan guiçona: hori Abrahamec eztu eguin.

41 Çuec eguiten dituçue çuen aitaren obrác. Eta erran cieçoten, Gu ezgaituc paillardiçataric iayo: aitabat diagu, *baita* Iaincoa.

42 Erran ciecén bada Iesusec, Baldin Iaincoa çuen aita baliz, maite ninduqueçue ni: ecen ni

Iaincoaganic partitu eta ethorri naiz:eta eznaiz neure buruz ethorri,baina harc igorri nau.

43 Cergatic ene lengoagea eztuçue aditzẽ?ceren ecin ençun baitiroqueçue ene hitza.

44* Çuec,aita deabruaganic çarete,eta çuen aitaren desirac eguin nahi dituçue:hura guicerhaile cen hatseandanic, eta eguián eztu perseueratu:ecen eguiaric ezta hartan. Noiz-ere erraiten baitu gueçurra, bere propritic minço da : ecen gueçurti da eta gueçurraren aita.

1.Ioan.3.8

45 Eta ceren nic eguia erraiten baitut, eznauçue sinhesten.

46 Norc çuetaric reprehenditzen nau ni bekatuz ? eta baldin eguiá erraiten badut, ceren çuec eznauçue sinhesten?

47 * Iaincoaganic denac, Iaincoaren hitzac ençuten ditu:halacotz çuec eztituçue ençutẽ, ceren ezpaitzarete Iaincoaganic.

1.Ioan.4.6

40 Ihardets ceçaten orduan Iuduéc eta erran cieçoten, Eztugu vngui erraiten guc , ecen Samaritano aicela hi,eta deabrua duala?

49 Ihardets ceçan Iesusec, Eztut nic deabrua: baina dut ohoratzen,neure Aita, eta çuec desohoratzen nauçue ni.

50 Eta nic eztut neure gloriá bilhatzen: bada bilhatzen duenic,eta iugeatzen duenic.

51 Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, baldin ne horc ene hitza beguira badeça , herioa eztu ikussiren seculan.

52 Orduã errã cieçoten Iuduéc,Orain eçagutu diagu ecẽ deabrua duala: Abrahã hil içã duc eta

Prophetác:eta hic dioc,Baldin nehorc enehitza beguira badeça,eztu daſtaturan herioa ſeculan.

53 Ala hi gure aita Abraham baino handiago aiz, cein hil içan baita? Prophetac-ere hil içan dituc:nor hic eure buruä eguiten duc?

54 Ihardets ceçan Ieſuſec,Baldin nic glorificatzen badut neure buruä,ene gloria ezta deus: ene Aita da ni glorificatzen nauena,ceinez erraiten baituçue çuec ecen çuen Iainco dela.

55 Eta eztuçue eçagutzen hura:baina nic eçagutzen dut hura: eta baldin erran badeçat ecen eztudala hura eçagutzen, içanen naiz çuec irudi, gueçurti:baina badaçagut hura, eta haren hitza beguiratzen dut.

56 Abraham çuen aita aleguera cedin ikus leçançát ene egun haur: eta ikuſſi vkan du, eta alegueratu içan da.

57 Erran cieçoten bada Iuduéc, Berroguey eta hamar vrthe oraino eztituc,eta Abraham ikuſſi duc?

58 Erran ciecén Ieſuſec,Eguiaz eguiaz erraitē drauçuet,Abraham cedin baino lehen, ni naiz.

Ber.10.31. 59 * Har ceçaten orduä harri:haren contra aurthiteco: baina Ieſus gorde cedin, eta ilki cedin templetic.

CAP. IX.

*1 Itſuric ſorthua ſendatu. 5 Munduaren arguia. 18, 34 Phariſeuén incredulitatea eta arrogantia. 28. Moyſeſen diſcipulu Iuduac. 35 Itſu arguituac Chriſt baithan ſinheſten, 38 eta hura adoratzen. 39 Chriſt mundura iugemendutan ethorri.*

1 ETa iragaiten cela Iesusec ikus ceçan guiçon sortzetic itsubat.

2 Eta interroga ceçaten bere discipuluéc, erraitén çutela, Magistruá, Ceinec bekatu eguin du, hunec ala hunen aitaméc, hunela itsu sor ledin?

3 Ihardets ceçan Iesusec, Ez hunec bekatu eguin du, ez hunen aitaméc: baina *itsu iayo da*, Iaincoaren obrác manifesta litecençat hunetan.

4 Ni igorri nauenaren obrác eguin behar ditut, eguna deno: badatorque gaua noiz nehorc ecin obraric baitaidi.

5 Munduã naiceno, *munduaren Arguia naiz.

*Lehẽ 1. 5.9 eta 8.11. berriz 12. 35.46.*

6 Haur erran çuenean thu eguin ceçan lurrera, eta eguin ceçan lohi thutic, eta lohi harçaz frota citzan itsuaren beguiac:

7 Eta errã cieçõ, Oha garbitzera Siloe, igorria erran nahi deneco ikuzgarrira. Ioan cedin bada, eta garbi cedin, eta itzul cedin ikusten çuela.

8 Bada auçoéc, eta lehen ikussi çutenéc ecen itsu cela, erraiten çutén, Ezta haur iarriric *ohi* cegoena eta escatzen cena?

9 Batzuc erraitẽ çutén, Haur da: eta bercéc, Hura dirudi, *Baina* berac erraitẽ çuẽ, Ni naiz *hura*.

10 Erran cieçoten bada, Nolatan irequi içan dirade hire beguiac?

11 Ihardets ceçan harc, eta erran ceçan, Iesus deitzen den guiçonac lohi eguin du, eta frotatu ditu ene beguiac, eta erran draut, Oha Siloeco ikuzgarrira, eta garbi adi. Bada ioanic eta gar-

bituric ikuſtea recebitu dut.

12 Orduan erran cieçoten, Non da hura? Dio, Eztaquit.

13 Eramaiten dute itſu ohi çen hura Phariſeuetara,

14 Eta cen Sabbathoa Ieſuſec lohia eguin çuenean eta haren beguiac irequi cituenean.

15 Berriz bada interroga ceçaten hura Phariſeuéc-ere nolatan ikuſtea recebitu çuẽ. Eta harc erran ciecén, Lohi eçarri vkan draut neure beguién gainera, eta garbitu naiz, eta ikuſten dut.

16 Erraiten çuten bada Phariſeuetaric batzuc, Guiçon haur ezta Iaincoaganic: ecen Sabbathoa eztu beguiratzen. Bercéc erraiten çuten, Nolatan guiçõ vicitze gaichtotaco batec ſigno hauc eguin ahal ditzaque? Eta diſſenſione cen hayén artean.

17 Erraitẽ draucate itſuari berriz, Hic cer dioc harçaz, ceren beguiac irequi drauzquian? Eta harc érran ceçan, Propheta dela.

18 Baina etzeçatẽ ſinhets Iuduéc harçaz, ecen itſu içan cela, eta ikuſtea recebitu çuela, ikuſtea recebitu çuenaren aitamác dei litzaqueteno:

19 Eta interroga citzaten hec, cioitela, Haur da çuen ſeme çuec itſu iayo cela dioçuena? nolatan bada orain dacuſſa?

20 Ihardets ciecén haren aitaméc, eta erran ceçaten, Badaquigu ecen haur dela gure ſemea, eta itſu iayo içan dela:

21 Baina nolatan orain dacuſſan, eztaquigu: edo norc irequi dituen hunen beguiac, guc ezta-

quigu:berac adin du: bera interroga eçaçue,bera bere buruäz minçaturen da.

22 Gauça hauc erran citzaten haren aitamec, ceren beldur baitziraden Iuduén: ecen ia ordenatu çuten Iuduéc, baldin nehorc aithor baleça hura licela Christ, synagogatic iraitz ledin.

23 Halacotz haren aitamec erran ceçaten, Adin du, bera interroga eçaçue.

24 Dei ceçaten bada bigarren aldian guiçon itsu içana,eta erran cieçoten,Emóc gloria Iaincoari : guc bacequiagu ecen guiçon hori gaichtoa dela.

25 Ihardets ceçan bada harc, eta erran ceçan, Gaichto denez eztaquit: gauçabat badaquit, ecen itsu nincelaric orain badacussadala.

26 Eta erran cieçoten berriz,Cer eguin drauc? nolatan irequi ditu hire beguiac?

27 Ihardets ciecén,Ia erran drauçuet,eta eztuçue ençun: cergatic berriz ençũ nahi duçue? ala çuec-ere haren discipulu eguin nahi çarete?

28 Orduan iniuria ceçaten hura, eta erran ceçaten, Aicén hi haren discipulu : guçaz den becembatean,Moysesen discipulu gaituc.

29 Guc baceaquiagu ecen Moysesi minçatu içan çayola Iaincoa : baina haur nondic den etzeaquiagu.

30 Ihardets ceçan guiçonac eta erran ciecén, Segur,hunetan da miraculua, ceren çuec ezpaitaquiçue nondic den, eta irequi baititu ene beguiac.

31 Eta badaquigu ecen Iaincoac vicitze gaich-

totacoac eztituela ençutẽ: baina baldin norbeit Iaincoaren cerbitzari bada, eta haren voronda-tea eguiten badu, hura ençuten du.

32 Egundano ençun içan ezta ecen nehorc ire-qui duela itsu sorthuren beguiric.

33 Baldin ezpaliz haur Iaincoaganic, deus ecin laidi.

34 Ihardets ceçaten eta erran cieçoten, Hi be-katutan sorthua aiz guciori, eta hic iracasten gaituc gu? Eta iraitz ceçaten hura campora.

35 Ençun ceçan Iesusec nola egotzi vkan çu-ten hura campora: eta eriden çuenean hura, er-ran cieçón, Sinhesten duc hic Iaincoaren Semea baithan?

36 Ihardets ceçan harc eta erran ceçan, Eta nor da, Iauna, sinhets deçadan hura baithan?

37 Eta erran cieçón Iesusec, Eta ikussi duc hu-ra, eta hirequin minço dena duc hura.

38 Eta harc dio, Sinhesten diat, Iauna. Eta ado-ra ceçan hura.

*Lehen* 3.17 *berr.* 12.47

39 Eta erran ceçan Iesusec, *Iugemẽdu *eguitera* ni mundu hunetara ethorri naiz: ikusten eztu-tenéc, ikus deçatençát: eta ikusten dutenac itsu ditecençat.

40 Eta ençun ceçaten hori, Phariseuetaric ha-requin ciraden batzuc, eta erran cieçoten, Ala gu-ere itsu gara?

41 Erran ciecén Iesusec, Baldin itsu bacinete, e-tzinduqueite bekaturic: baina orain erraiten du-çue, Badacussagu: beraz çuen bekatua badago.

CAP. X.

*1, 7, 9 Borthá Christ, Arthaldea. Ohoin eta gaichtaguin cein. 2, 11 Artzaina. 12 Mercenarioa. 16, 27 Christen ardiac. 19 Dissensione Christen causaz. 24 Iesus interrogatu, Christ denez. 26 Iuduec ez sinhesten: 31 eta Christ lapidatu nahi. 35 Iainco cein deitzen Scripturán. 41 Anhitzec Christ baithan sinhesten.*

1 EGuiaz eguiaz erraiten draucuet, borthatic ardién arthe-guira sartzen eztena, baina da igaiten bercetaric, hura ohoin da eta gaichtaguin.

2 Baina borthatic sartzẽ dena, da ardiẽ artzaina.

3 Huni borthalçainac irequiten drauca, eta ardiéc haren voza ençuten duté: eta bere ardiac deitzen ditu cein bere icenez, eta eramaiten ditu camporat.

4 Eta bere ardiac idoqui dituenean, hayén aitzinean ioaiten da: eta ardiac hari iarreiquiten çaizca, ecen eçagutzen dute haren voza.

5 Eta arrotz bati etzaizca iarreiquiren, baina ihes eguinen draucate: ceren ezpaitute eçagutzen arrotzén voza.

6 Comparatione haur erran ciecén Iesusec: baina hec etzeçatẽ eçagut cer cen hæy erraiten cerauena.

7 Erran ciecén bada berriz Iesusec, Eguiaz eguiaz erraiten draucuet, ecen ni naicela ardién borthá.

8 Guciac cembat-ere ene aitzinean ethorri

baitirade ohoin dirade eta gaichtaguin: baina ardiéc eztituzte hec ençun vkan.

9 Ni naiz borthá, nitaric baldin nehor ſar badadi ſaluaturen da: eta ſarthuren da eta ilkiren da, eta bazca eridenen du.

10 Ohoina ezta ethorten *ardiac* ebats eta hil eta deſeguin ditzançat baicen: ni ethorri naiz vicitze dutençat, eta abundantia dutençát.

*Eſa.4.11. ezech.34.23.*

11 *Ni naiz artzain ona: artzain onac bere vicia eçarten du bere ardiacgatic:

12 Baina mercenarioac, eta artzain eztenac, ceinenac ezpaitirade ardiac, dacuſſanean otſoa heldu dela, vtziten ditu ardiac, eta ihes eguiten du: eta otſoac harrapatzen eta barreyatzen ditu ardiac.

13 Eta mercenarioac ihes eguiten du, ceren mercenario baita, eta ezpaitu ardién anſiaric.

14 Ni naiz artzain ona, eta eçagutzen ditut neure ardiac, eta eçagutzen naiz neure *ardiéz*.

15 Aitac ni eçagutzen nauen beçala, nic-ere eçagutzen dut Aita: eta neure vicia eçarten dut *neure* ardiacgatic.

16 Berce ardiric-ere badut cein ezpaitirade arthegui hunetaco: hec-ere ekarri behar ditut: ecen ene voza ençunen duté, *eta eguinen da arthegui bat *eta* artzain bat.

*Ezech.37.22.*

*Eſa.53.7.*

17 Halacotz maite nau ni Aitac, ceren *nic eçarten baitut neure vicia, berriz hura har deçadançat.

18 Nehorc eztraut hura edequiten, baina nic dut eçarten hura neure buruz: bothere dut ha-

ren eçarteco, eta bothere dut berriz haren hartzeco. *Manamendu haur recebitu dut neure Aitaganic. Act. 4.28.

19 Orduan berriz dissensione eguin cedin Iuduén artean propos haucgatic.

20 Eta erraiten çuten hetaric anhitzec, Deabrua du, eta erhotu doa: cergatic horri behatzẽ çaizquiote?

21 Bercéc erraiten çutén, Hitz hauc eztirade deabrua duenarenac: ala deabruac itsuén beguiac irequi ahal ditzaque?

22 *Orduan Dedicationearen *bestá* eguin cedin Ierusalemen, eta neguä cen. 1. Mach. 4. 59.

23 Eta passeatzen cen Iesus templean Salomonen galerian.

24 Ingura ceçaten bada hura Iuduéc, eta erran cieçoten, Noizdrano gure arimá daducac dudatan? baldin hi bahaiz Christ, erran ieçaguc frangoqui.

25 Ihardets ciecén Iesusec, Erran drauçuet, eta eztuçue sinhesten: nic neure Aitaren icenean eguiten ditudan obréc niçaz testificatzen duté.

26 Baina çuec eztuçue sinhesten: ecen etzarete ene ardietaric, nola erran baitrauçuet.

27 Ene ardiéc ene voza ençuten duté, eta nic eçagutzen ditut hec, eta iarreiquiten çaizquit niri.

28 Eta nic vicitze eternala emaiten drauet hæy: eta eztirade galduren seculan: eta eztitu harrapaturen hec nehorc ene escutic.

29 Ene Aita niri *hec* eman drauzquidana, gu-

ciac baino handiago da, eta nehorc ecin harrapa ditzaque hec ene Aitaren eſcutic.

30 Ni eta Aita bat gara.

Lehen 8.59 31 *Har ceçaten bada berriz harri Iuduéc haren lapidatzeco.

32 Ihardets ciecén Ieſuſec, Anhitz obra onic eracutſi vkan drauçuet neure Aitaganic: obra hetaric ceinagatic lapidatzen nauçue?

33 Ihardets cieçoten Iuduéc, cioitela, Obra onagatic ezaugu lapidatzen, baina blaſphemioagatic, eta ceren hic guiçon aicelaric eguiten baituc eure buruä Iainco.

34 Ihardets ciecén Ieſuſec, Ezta ſcribatua çuen Psal.82.6. Leguean, *Nic erran dut, Iainco çarete?

35 Baldin hec deithu baditu Iainco, ceinetara Iaincoaren hitza eguin içan baita, eta ecin hauts baitaite Scripturá:

36 *N i* Aitac ſanctificatu eta mũdura igorri bainau, çuec dioçue ecen blaſphematzẽ ari naicela, ceren errã dudã, ecen Iaincoarẽ Semea naicela?

37 Baldin neure Aitaren obrác eguiten ezpaditut, ezneçaçuela ſinhets:

38 Baina baldin eguiten baditut, eta baldin ni ſinhetſi nahi ezpanauçue, obrác ſinhets itzaçue: eçagut eta ſinhets deçaçuen ecen Aita nitan dela eta ni hartan.

39 Berriz bada hura hartu nahiz çabiltzan: baina itzur cedin hayén eſcuetaric.

40 Eta ioan cedin berriz Iordanaz berçe aldera, lehen Ioannes batheyatzen ari cen lekura: eta egon cedin han.

41 Eta anhitz ethor cedin harengana, eta erraiten çutén, Ioānesec eztu signoric batre eguin vkan: baina Ioannesec huneçaz erran dituen gauça guciac, eguiazcoac ciraden.

42 Eta anhitzec han sinhets ceçaten hura baithan.

CAP. XI.

*1 Lazaro eri. 11 Lo etzatea, hil içateagatic. 16 Thomas. 21, 32 Martharen eta Mariaren arrangurá Christez. Vicitzeco resurrectionea. 26 Christ baithango fedea. 27 Marthare͂ aithorra. 33, 35 Christ nigarrez, 41 eta othoiztez egon, 44 Lazaro resuscitatu. 45 Iuduetaric anhitzec Christ baithan sinhesten. 47 Conseillu Phariseuéc Christen contra. 48 Romanoac. 49 Caiphasec prophetizatzen. 54 Iesus Ephraimera retiratzen.*

1 CEn bada Lazaro *deitzen cen* guiçombat eri, Bethaniaco, Mariaren eta Martha haren ahizparen burguco.

2* (Eta Maria haur cen Iauna vnguentuz vnctatu çuena, eta haren oinac bere *adatseco* biloez ichucatu cituena: ceinen anaye Lazaro baitzen eri) *Mat berr.*

3 Igor ceçaten bada hunen arrebéc harengana, cioitela, Iauna, huná, hic maite duana, eri duc.

4 Eta *hori* ençunic Iesusec erran ceçan, Eritassun hori ezta heriotara, baina Iaincoaren gloriatan, *eritassun* harçaz Iaincoaren Semea glorifica dadinçat.

5 Eta cituen maite Iesusec Martha, eta haren ahizpá, eta Lazaro.

6 Bada ençun çuenean ecen eri cela, bi egun e-
gon cedin, orduan non baitzén leku hartan.
7 Guero horren ondoan erran ciecén discipu-
luey, Goacen Iudearát berriz.
8 Diotsate discipuluéc, Magistruá, orain ciabil-
tzan Iuduac hi lapidatu nahiz, eta berriz hara
ioaiten aiz?
9 Ihardets ceçan Iesusec, Egunean eztira ha-
mabi oren? baldin nehor egunaz ebil badadi,
ezta behaztopatzen: ecen mundu hunetaco ar-
guia ikusten du.
10 Baina baldin nehor ebil badadi gauaz, be-
haztopatzẽ da: ecen arguiric ezta hura baithan.
11 Gauça hauc erraiten ditu, eta guero dioste,
Lazaro gure adiquisdea lo datza, baina banoa
iratzar deçadan.
12 Erran cieçoten bada bere discipuléc, Iauna,
baldin lo badatza sendaturen duc.
13 Eta *haur* erran ceçan Iesusec haren herioaz:
eta hec vste çuten lozco lokartzeaz erraiten
çuela.
14 Orduan bada erran ciecén Iesusec claroqui,
Lazaro hil da:
15 Eta aleguera naiz çuengatic (sinhets deça-
çuençat) ceren ezpainincén han: baina goacen
harengana.
16 Erran ciecén bada Thomas Didymus dei-
tzen denac discipulu laguney, Goacen gu-ere
horrequin hil gaitecençát.
17 Ethor cedin bada Iesus, eta eriden ceçan
hura ia laur egun çuela monumentean cela.

18 Cen bada Bethania hurbil Ierusalemeren hamaborz stadioren inguruä:

19 Eta Iuduetaric anhitz ethor citecen Marthagana eta Mariagana, hec consola litzatençát bere anayeaz.

20 Marthac bada ençun ceçanean Iesus ethorten cela, aitzinera ilki cequión: eta Maria etcheã iarriric cegoen.

21 Errã cieçón bada Marthac Iesusi, Iauna, baldin içan bahinz hemẽ, ene anaye etzuqueán hil:

22 Baina orain-ere baceaquiat ecen cer-ere galde eguinen baitraucac Iaincoari, emanen drauala hiri.

23 Diotsa Iesusec, Resuscitaturẽ dun hire anaye.

24 Diotsa Marthac, Baceaquiat ecen resuscitaturen dela *resurrectionean, azquen egunean. Lehen 5.29 luc 14.14.

25 Erran cieçón Iesusec, Ni naun resurrectionea eta vicitzea: * ni baithan sinhesten duena, Lehen 6.35 baldin hil içan badere vicico dun:

26 Eta nor-ere vici baita, eta sinhesten baitu ni baithan, seculan eztun hilen. Sinhestẽ dun haur?

27 Erraiten drauca, Bay, Iauna, nic diat sinhesten ecen hi aicela Christ Iaincoarẽ Seme mundura ethorteco cena.

28 Eta haur erranic, ioan cedin, eta secretuqui dei ceçan Maria bere ahizpá, cioela, Magistrua dun hemen, eta deitzen au.

29 Hura, *hori* ençun duenean, iaiquitẽ da fitetz, eta ethorten da harengana.

30 Ecen oraino etzén ethorri Iesus burgura: baina cen Marthac encontratu çuen lekuan.

31 Orduan harequin etchean ciraden Iuduac, eta hura consolatzen çutenac, ikussiric ecen Maria hain fitetz iaiqui, eta ilki cela, iarreiqui cequizquion hari, cioitela, Monumentera ioaiten da, han nigar daguiançat.

32 Bada Mariac, ethor cedinean Iesus cen lekura, hura ikussiric, egotz ceçan bere buruä haren oinetara, ciotsala, Iauna, baldin içan bahinz hemen, etzuqueán hil ene anaye.

33 Iesusec bada ikus ceçanean hura nigarrez legoela, eta harequin ethorri ciraden Iuduac nigarrez leudela, spirituz mouituric trubla ceçan bere buruä:

34 Eta erran ceçan, Non eçarri duçue? Erraiten draucate, Iauna, athor eta ikussac.

35 Eta nigar eguin ceçan Iesusec.

36 Erran ceçaten bada Iuduéc, Horra nola maite çuen.

37 Eta hetaric batzuc erran ceçaten, Ecin eguin ciroqueen *itsuaren beguiac irequi dituen hunec, haur-ere hil ezladin?

Lehen 9.6.

38 Iesus bada berriz bere baithan mouitzen cela, ethorten da monumentera, eta lecea cen, eta harribat haren gainera, eçarria.

39 Dio Iesusec, Altcha eçaçue harria. Diotsa Marthac, hil içan cenaren arrebác, Iauna, kirestu duc gaurguero: ecen laur egunetacoa duc.

40 Diotsa Iesusec, Eztraunat erran, ecen baldin sinhets badeçã ikussiré dunala Iaincoaré gloria?

41 Ken ceçaté bada harria, hila eçarri içan cen *lekutic*. Orduã Iesusec altchaturic goiti beguiac,

erran ceçan, Aitá,esquerrac emaitē drauzquiát,
ceren ençun bainauc:
42 Etá nic baniaquián ecen bethi ençuten naúala: baina inguru dagoen gendetzeagatic erran diát, sinhets deçatençat ecen hic igorri naualá.
43 Eta hauc erranic, voz goraz oihu eguin ceçan, Lazaro, athor campora.
44 Eta hil içan cena ilki cedin, escuac eta oinac lothuraz lothuac cituela: eta haren beguithartea crobitchet batez cen estalia. Dioste Iesusec, Lacha eçaçue eta vtzi eçaçue ioaitera.
45 Bada Iudu Mariagana ethorri ciradenetaric, eta Iesusec eguin cituen gauçác ikussi cituztenetaric anhitzec sinhets ceçaten hura baithan.
46 Baina hetaric batzu ioan citecen Phariseu etara, eta erran cietzen hæy Iesusec eguin cituen gauçác.
47 Orduan bil ceçaten Sacrificadore principaléc eta Phariseuéc conseillua, eta erraiten çuten, Cer eguiten dugu, ecen guiçon hunec anhitz signo eguiten du.
48 Baldin hunela vtzi badeçagu, guciéc sinhetsiren duté hori baithan: eta ethorriren dirade Romanoac, eta arrasaturen duté bay gure lekua, bay nationea.
49 Orduan hetaric batec, Caiphasec, cein baitzén vrthe hartaco Sacrificadore subirano, erran ciecén, Çuec eztaquiçue deus:
50 *Eta eztuçue pensatzen ecen probetchu dugula, guiçombat hil dadin populuagatic, eta natione gucia gal eztadin. Ber.18.14

51 Eta haur bere burutic etzeçan erran: baina nola baitzén vrthe hartaco Sacrificadore ſubirano, prophetiza ceçan ecen Ieſuſec hil behar luela nationeagatic.

52 Eta ez ſolament natione harengatic, baina are Iaincoaren haour barreyatuac bil litzançát batetara.

53 Bada egun harçaz gueroztic conſultatzen çutén elkarrequin hura hil leçatençát.

54 Ieſus bada guehiagoric etzabilan aguerriz Iuduén artean: baina ioan cedin hãdic deſertuaren aldeco comarcarát, Ephraim deitzen den hirira: eta han egoiten cen bere diſcipuluequin.

55 Eta cen hurbil Iuduén bazcoa, eta igan cedin anhitz Ieruſalemera comarca hartacoric bazco aitzinean, purifica litecençat.

56 Bada Ieſuſen bilha çabiltzan, eta elkarren artean erraiten çutén, tẽplean leudela, Cer irudi çaiçue, ecen eztela ethorriren beſtara?

57 Eta eman ceçaten Sacrificadore principaléc eta Phariſeuéc manamendu, baldin nehorc eçagutzen balu non licén, eracuts leçan, hatzaman leçatençát.

CAP. XII.

*3 Mariac Ieſuſen oinac vnguenſtatzen. 10 Sacrificadorée Lazaro hil nahi. 14 Chriſt Ieruſalemen ſartzen. 25 Bere viciari on edo gaitz eritzitea. 26 Chriſt cerbitzatzen dutenac. 27 Chriſten othoitzá. 28 Voza cerutic. 31 Mũduaren iugemendua. 35, 46 Arguia. Ilhumbea. 36 Arguia baithan ſinheſteco. Chriſt Iuduetaric gordatzen. 42 Sinhetſi dutẽ principal batzuén fedea beldurti. 47 Chriſt ez munduaren iugeatzera ethorri, baina ſaluatzera.*

1* BAda Iesus sey egun bazcoren baitzinetic ethor cedin Bethaniara, non baitzén Lazaro hil içancena, cein resuscitatu baitzuen hiletaric. *Mat.26.6. marc 14.3.*

2 Eguin cieçoten bada hari affaribat han, eta Marthac cerbitzua eguiten çuen: eta Lazaro cen harequin mahainean iarriric ceudenetaric bat.

3 Orduan Mariac harturic liberabat vnguentu aspic finez precio handitacoric, vncta citzan Iesusen oinac, eta ichuca citzan bere adatsaz: eta etchea bethe cedin vnguentuaren vrrinez.

4 Orduan erran ceçan harẽ discipuluetaric batec, Iudas Iscariot Simonen *semeac*, hura traditturen çuenac.

5 Ceren vnguentu haur ezta saldu içan hirur ehun dinerotan, eta eman paubrey?

6 Eta haur erran ceçan, ez paubrez harc ansiaric çuenez: baina cerẽ ohoin baitzen, *eta mulsá baitzuen, eta eçarten ciradenac *harc* ekarten baitzituen. *Ber.13.29*

7 Erran ceçan bada Iesusec, Vtzi eçac, ene sepultura eguneco hori beguiratu dic.

8 Ecen paubreac bethiere vkanẽ dituçue çuequin: baina ni eznauçue bethiere vkanen.

9 Orduan eçagut ceçan Iuduetaric gendetze handic, ecen han cela: eta ethor citecen ez Iesusgatic solament, baina are Lazaro ikus leçatẽçat, cein *harc* hiletaric resuscitatu baitzuen.

10 Eta consulta ceçaten Sacrificadore princi-

paléc Lazaro-ere hil leçatençát.

11 Ecen Iuduetaric anhitz haren causaz ioaiten ciraden, eta sinhesten çuten Iesus baithan.

*Matt.21.8. marc 11.7. luc 19.35.* 12 * Biharamunean bestara ethorri içan cen gendetze handic, ençunic ecen Iesus ethorten cela Ierusalemera,

13 Har citzaten palma adarrac, eta ilki cequizquion aitzinera, eta oihu eguiten çutén, Hosanna, Benedicatu *dela* Iaunaren icenean ethorten den Israeleco reguea.

14 Eta eriden ceçan Iesusec asto-vme arbat, *eta* iar cedin haren gainean, scribatua den beçala,

*Zach 9.9.* 15 *Ezaicela beldur Siongo alabá: huná, hire Regue ethorten dun iarriric dagoela asto-vme ar-baten gainean.

16 Eta gauça hauc etzitzaten eçagut haren discipuluéc lehenetic: baina Iesus glorificatu içan cenean, orduan orhoit citecen ecen gauça hauc harçaz scribatuac ciradela, eta hari gauça hauc eguin cerautzatela.

17 Eta testificatzen çuen harequin cen gendetzeac, ecen Lazaro deithu çuela monumẽtetic, eta hura resuscitatu çuela hiletaric.

18 Halacotz atzinera ethorri-ere içan çayón gendetzea, ecen ençun çutẽ, harc miraculu haur eguin çuela.

19 Eta Phariseuéc erran ceçaten bere artean, Eztacussaçue ecen etzaretela deus probetchatzen? horrá, mundua haren ondoan ioan da.

20 Eta baciraden Grec batzu igaiten ohi ciradenetaric adoratzera bestán:

21 Hauc bada ethor citecen Philippegana cein *baitzén* Bethſaidaco Galilean, eta othoitz eguin cieçoten, cioitela, Iauna, nahi guendiquec Ieſus ikuſſi.

22 Ethorten da Philippe eta erraiten drauca Andriui, Andriuëc berriz eta Philippec erraiten draucate Ieſuſi.

23 Eta Ieſuſec ihardets ciecén, cioela, Ethorri da ordua guiçonaren Semea glorificaturen baita.

24 Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, baldin ogui bihia lurrera eroriric hil ezpadadi, hura bera dago: baina baldin hil badadi fructu anhitz ekarten du.

25 *Bere viciari on daritzanac galdurẽ du hura: eta bere viciari gaitz daritzanac mũdu hunetan, vicitze eternalecotzat beguiraturen du hura.

*Matth. 10. 39. eta 16 25. marc 8.35. luc 9.24. eta 17.33.*

26 Baldin ni cembeitec cerbitzatzen banau, niri iarreiqui bequit: eta non ni içanen bainaiz, han ene cerbitzaria-ere içanen da: eta baldin cembeitec ni cerbitza baneça, ohoraturen du hura *ene* Aitac.

27 Orain ene arimá trublatua da: eta cer erranen dut? Aitá, empara neçac orẽ hunetaric: baina halacotz ethorri nauc oren hunetara.

28 Aitá, glorifica eçac eure icena. Ethor cedin orduan vozbat cerutic, *cioela*, Eta glorificatu diat, eta berriz glorificaturen.

29 Eta gendetze han cenac, eta ençun çuenac, cioen, igorciribat eguin çuela. Bercéc cioiten, Ainguerua minçatu içan çayó.

30 Ihardets ceçan Ieſuſec eta erran, Ezta ene-

gatic voz haur eguin içan,baina çuengatic.

31 Orain da mundu hunen iugemendua: orain mundu hunetaco princea egotziren da cãpora.

32 Eta nic, baldin goititua banaiz lurretic, guciac tiraturen ditut neuregana.

33 (Eta haur erraiten çuen, aditzera emaiten çuela cer herioz hil behar çuen)

34 Ihardets cieçón gẽdetzeac, Guc ençun diagu Leguetic,*ecẽ Chrift badagoela eternalqui: eta nola hic erraiten duc ecen behar dela goiti dadin guiçonaren Semea? nor da guiçonaren Seme hori?

Psal. 89.36 eta 110.4, eta 117.2. esa.40.8. ezec.37.25

35 Erran ciecén orduan Iesusec, Oraino dembora guti batetacotz *Arguia çuequin da: ebil çaitezte Arguia duçueno, ilhumbeac ardiets etzaitzatençát:ecen ilhumbean dabilanac,eztaqui norat ioaiten den.

Lehen 1.9.

36 Arguia duçueno finhets eçaçue.Arguia baithan, Arguiaren seme çaretençat. Gauça hauc erran citzan Iesusec: guero ioanic gorde cedin hetaric.

37 Eta hambat miraculu eguin baçuen-ere hayén aitzinean, etzutẽ finheften hura baithan:

38 Esaias prophetaren hitza compli ledinçát, ecin erran vkan baitu,*Iauna,norc finhetsi vkan du gure hitza, eta Iaunaren bessoa nori reuelatu içan çayo?

Esa.53.1. rom.10.16.

39 Halacotz ecin finhets ceçaqueten, ceren berriz erran baitu Esaiasec,

40 *Itsutu vkan ditu hayén beguiac,eta gogortu vkan du hayén bihotza : beguiz ikus eztéça-

Esa.6.9. mat.13.14 marc 4.12. luc 8.10. act.28.26. rom.11.8.

tençat,eta bihotzez adi eztteçaten, eta conuerti eztitecen,eta senda eztitzadan.

41 Gauça hauc erran citzan Esaiasec, haren gloriá ikussi çuenean, eta minçatu içan da harçaz.

42 Badaric-ere principaletaric-ere anhitzec hura baithan sinhets ceçaten:baina Phariseuacgatic etzuten aithortzen, synagogatic campora egotz litecen beldurrez.

43 *Ecen maiteago vkan dute guiçonén gloriá, ecen ez Iaincoaren gloriá. *Leben 5.44*

44 Orduan oihu eguin ceçan Iesusec, eta erran ceçan,Ni baithan sinhesten duenac, eztu sinhesten ni baithan, baina ni igorri nauena baithan.

45 Eta ni ikusten nauenac, ikusten du ni igorri nauena.

46 * Ni Argui mũdura ethorri naiz, ni baithan sinhesten duenic batre,ilhumbean eztagoençát *Leben 3.19 eta 9.39.*

47 *Eta baldin nehorc ençũ baditza ene hitzac, eta ez sinhets, nic eztut condemnatzen hura:ecen eznaiz ethorri mundua condemna deçadançát,baina mundua salua deçadançat. *Leben 3.17*

48 Ni iraizten nauenac, eta ez recebitzen ene hitzac, badu norc hura condemna deçan: * ni minçatu naicen hitzac condemnaturen du hura azquen egunean, *Marc 16. 16.*

49 Ecen ni neure burutic eznaiz minçatu: baina ni igorri nauen Aitac berac manamendu eman draut,cer erran deçaquedan eta cer minça naiten.

50 Eta badaquit ecen haren manamendua vi-

citze eternal dela: bada nic erraiten ditudan gauçác, nola Aitac eman baitrauzquit, hala erraiten ditut.

CAP. XIII.

*5 Christec bere discipuluey oinac ikutzen eta ichucatzẽ. 12 Apostoluac chahu. 13 Christ Iaun. 14 Oinén ikutzea. 16 Apostoluac cerbitzari. 18, 21 Iudasen traditionea aitzinetic erran içan. 20 Christec igorria recebitzean, nor recebitzen. 27 Satan Iudas baithan sarthu. 34 Onheriztea. 38 Pierrisen vkatzea aitzinetic erran.*

*Mat.26.2. marc 14.1 luc 22.1.*

1 * ETa bazco besta aitzinean, çaquiala Iesusec ecen ethorri cela haren orena iragan ledinçat mundu hunetaric Aitaganát, nola maite vkan baitzituen bereac, munduan ciradenac, finerano maite vkan ditu hec.

2 Eta affal ondoan (deabruac ia eçarri çuenean Iudas Iscarioten, Simonen *semearen* bihotzean, hura tradi leçan)

3 Daquialaric Iesusec gauça gucia emã drauzcala hari Aitác escuetara, eta bera Iaincoaganic ilki dela, eta Iaincoganat ioaiten dela:

4 Iaiquiten da affaritetic, eta vtziten du arropá: eta harturic longerabat, guerrica cedin *harçaz*.

5 Guero eçar ceçan vr bacin batetara, eta has cedin disciupuluen oinén ikutzẽ, eta guerricatua cen oihalaz ichucatzen.

6 Ethor cedin bada Simon Pierrisgana: eta harc erran cieçon, Iauna, hic niri oinac ikutzen

drauzquidac?

7 Ihardets ceçan Iesusec eta erran cieçon, Nic eguiten dudana, hic eztaquic orain: baina guero eçaguturen duc.

8 Diotsa Pierrisec, Eztituc ikuciren ene oinac seculan. Ihardets cieçón Iesusec, Baldin ikuz ezpaheçat, eztuc vkanen parteric enequin.

9 Diotsa Simon Pierrisec, Iauna, ez ene oinac solament, baina escuac-ere eta buruä.

10 Diotsa Iesusec, Ikucia denac, eztic mengoaric oinac ikuz ditzan baicen, baina duc chahu gucia: *eta çuec chahu çarete, baina ez gucioc.

Berriz 15. 3.

11 Ecen baçaquiã cein cen hura traditzen çuena: halacotz errã ceçan, Etzarete chahu gucioc.

12 Bada ikuci cituenean hayén oinac, eta bere arropac harçara hartu cituenean, berriz mahainean, iarriric errã ciecén, Badaquiçue cer eguin drauçuedan?

13 Çuec deitzen nauçue, Magistrua eta Iauna, eta vngui dioçue: ceren bainaiz.

14 Baldin beraz nic ikuci baditut çuen oinac Iauna eta Magistrua naicelaric, çuec-ere behar drauzteçue elkerri oinac ikuci.

15 Ecen exemplu emã vkã drauçuet, nic çuey eguin drauçuedan beçala, çuec-ere daguiçuen.

16* Eguiaz eguiaz erraitẽ drauçuet, Cerbitzaria ezta bere nabussia baino hãdiago, ez eta embachadorea hura igortẽ duena bainoa hãdiago.

Berriz 15. 20. mat. 10.24 luc 6.40.

17 Baldin gauça hauc badaquizquiçue, dohatsu içanen çarete baldin eguin baditzaçue.

18 Eznaiz çueçaz gucioz minço: nic badaquit

cein elegitu ditudan: baina *behar da* compli da-
*Psal.4.10* din Scripturá,*Enequin oguia iaten duenac,alt-
chatu du ene contra bere oindogorá.

19 Oraindanic erraiten drauçuet eguin dadin
baino lehen, eguin datenean,ſinhets deçaçuen-
çát ecen ni naicela.

*Matth.10.40. luc 10.16.* 20*Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, baldin nic
norbeit igor badeçat,norc-ere hura recebitzen
baitu,ni recebitzen nau:eta ni recebitzen naue-
nac, recebitzen du ni igorri nauena.

*Matth.26 21. marc 14.18 luc 22.21.* 21 Gauça hauc erran cituenean Ieſus trubla ce
din ſpirituan, eta teſtifica ceçan, eta erran,* E-
guiaz eguiaz erraiten drauçuet,ecẽ çuetaric ba-
tec tradituren nauela ni.

22 Orduan diſcipuluéc batac berceaganat be-
hatzen çutén,ceinez minço cen dudatã içanez.

23 Eta cen Ieſuſen diſcipuluetaric bat mahai-
nean haren bulharrera iarria,cein maite baitzuẽ
Ieſuſec:

24 Eta keinu eguin cieçón huni Simon Pier-
riſec,galde leguión,cein cen harc erraitẽ çuena.

25 Bada harc Ieſuſen ſtomaquera behera turic,
diotſa, Iauna, cein da?

26 Ihardets ceçan Ieſuſec,Hura duc nic ahamẽ
trempatua emanen draucadana. Eta buſti çue-
nean ahamena,eman cieçón Iudas Iſcariot Si-
monenari.

27 Eta ahamenaren ondoan ſar cequión Satã.
Eta diotſa Ieſuſec,Eguiten duana eguic fitetz.

28 Baina mahainean ciradenetaric batec-ere
etzuen aditzen certara hura erran ceraucan.

29 Ecen batzuc vste çuten, * ceren mulsá baitzuen Iudasec, ecen erran ceraucala Iesusec, Eros itzac bestacotzát behar ditugũ gauçác: edo paubrey cerbait eman liecén. *Leben 12.6*

30 Hura bada ahamena harturic, bertan ilki cedin, eta cen gauä.

31 Eta ilki cenean, erran ceçan Iesusec, Orain glorificatu da guiçonaren Semea, eta Iaincoa glorificatu da hartan.

32 Baldin Iaincoa glorificatu bada hartan, Iaincoac-ere glorificaturẽ du hura bere baithan, eta bertan glorificaturen du hura.

33 Haourtoác, oraino appurbat çuequin naiz: bilhaturen nauçue: baina* Iuduey erran drauedan beçala, Norat ni ioaiten bainaiz, çuec ecin ethor çaitezquete: *hala* çuey-ere erraiten drauçuet orain. *Leben 7.34*

34 *Manamendu berribat emaiten drauçuet, batac berceari on daritzoçuen, *nic* çuey on eritzi drauçuedan beçala, *çuec*-ere elkarri on daritzoçuençat. *Berriz. 15. 12. leuit. 19. 18 mat. 22. 39 1. ioã. 4. 21.*

35 Hunetan eçaguturen dute guciéc ecen ene discipulu çaretela, baldin charitate baduçue batac berceagana.

36 Diotsa Simon Pierrisec, Iauna, norat ioaiten aiz? Ihardets cieçón Iesusec, Norat ni ioaiten bainaiz, ecin orain iarreiqui aquidit: baina iarreiquiren atzait guero.

37 Diotsa Pierrisec, Iauna, ceren ecin iarreiqui naquidic orain? neure arima hiregatic eçarriren diát.

*Matth. 26. 31. marc 14. 30. luc 22. 34.* 38 Ihardets cieçón Iesusec, Eure arimá enegatic eçarriren baituc? * eguiaz eguiaz erraiten drauat, eztic ioren oillarrac vkatu nuqueano hiruretan.

## CAP. XIIII.

1 *Christen diuinitatea.* 2 *Vicitze eternala.* 6 *Bidea eta eguia.* 9 *Iaincoa eta Christ bat.* 11 *Haren obrác.* 14 *Haren icenean esca dadinac recebituren.* 16, 26 *Consolaçalea.* 21 *Christi on daritzana.* 27 *Christen baquea.* 30 *Mundu hunetaco princea.*

1 EZtadila trubla çuen bihotza: sinhesten duçue Iaincoa baithan, ni baithan-ere sinhetseçaçue.

2 Ene Aitaren etchean egoitzác anhitz dirade: baldin bercela baliz errã nerauqueçuen, Banoa çuey leku appaincera.

3 Eta ioan naiçatenean, eta leku çuey appaindu drauqueçuedaneã, berriz ethorriren naiz, eta harturen çaituztet neuregana: nõ bainaiz ni, çuec-ere çaretençát.

4 Eta norat ni ioaiten naicen badaquiçue, eta bidea badaquiçue.

5 Diotsa Thomasec, Iauna, etzeaquiagu norat ioaiten aicen: eta nolatan bidea ahal daquiquegu?

6 Diotsa Iesusec, Ni naiz bidea eta eguia eta vicitzea: nehor ezta ethorten Aitagana niçaz baicen.

7 Baldin eçagutzen banínduçue ni, ene Aita-

ere eçagut cineçaquete : eta orâindanic eçagutzen duçue hura, eta ikuſſi duçue hura.

8 Diotſa Philippec, Iauna, eracuts ieçaguc Aita, eta aſco ciaicuc,

9 Diotſa Ieſuſec, Hambat demboraz çuequin nauc, eta eznauc eçagutu ni? Philippé, ikuſſi nauenac ni, ikuſſi dic Aita: eta nola hic erraitẽ duc, Eracuts ieçaguc Aita?

10 Eztuc ſinheſten ecen ni Aita baithan, eta Aita ni baithan dela? Nic çuey erraiten drauzquiçuedan hitzac, neurorganic eztitut erraiten: baina nitan dagoen Aitac eguiten ditu obrác.

11 Sinhets neçaçue ecen ni Aita baithan, eta Aita ni baithan *dela*: ezpere obra beracgatic ſinhets neçaçue.

12 Eguiaz eguiaz erraitẽ drauçuet, norc ni baithan ſinheſten baitu, nic eguitẽ ditudan obrác, harc-ere eguinen ditu, eta hauc baino hãdiagoac eguinen ditu: ecen ni Aitaganat ioaiten naiz.

13 *Eta cer-ere eſcaturen baitzarete ene iceneã, hura dut eguinẽ: glorifica dadinçat Aita Semeã.

14 Baldin cerbait eſca baçaitezte ene icenean, nic dut eguinen.

15 Baldin niri on badariztaçue, ene manamẽduac beguiraitzaçue.

16 Eta nic othoitz eguinen draucat Aitari, eta berce Conſolaçalebat emanen drauçue, dagoen çat çuequin eternalqui:

17 Eguiazco Spiritu munduac ecin recebi deçaquena *diot*: ceren ezpaitu ikuſten hura, ez eçagutzen: baina çuec badaçaguçue hura, cerẽ çu-

*Berriz 16. 23. mat. 7. 7 marc 11. 24 luc 21. 9. iac. 1. 6.*

ec baithan egoiten baita, eta çuetan içanen da.

18 Etzaituztet vtziré çurtz: itzuliren naiz çuetara.

19 Oraino gutibat, eta munduac eznau guehiagoric ikuſſiren, baina çuec ikuſſiren nauçue: ceren ni vici bainaiz, çuec-ere vicico çarete.

20 Egun hartan çuec duçue eçaguturen ecen ni naicela neure Aita baithan, eta çuec ni baithã eta ni çuec baithan.

21 Ene manamenduey datchetena, eta hec beguiratzen dituena, da niri on dariztana: eta niri on dariztana, ene Aitaz onhetſia içanen da: eta nic hari on eritziren draucat, eta manifeſtaturé draucat hari neure buruä.

22 Diotſa Iudaſec, ez Iſcariotec, Iauna, nondic da ceren guri eure buruä manifeſtaturen baitraucuc, eta ez munduari?

23 Ihardets ceçan Ieſuſec, eta erran cieçón, Baldin norbeitec on badarizt niri, ene hitza beguiraturen du: eta ene Aitac onhetſiré du hura, eta harengana ethorriren gara, eta hura baithan egoitza eguinen dugu.

24 Niri on eztariztanac, ene hitzac eztitu beguiratzen: eta ençuten duçuen hitza, ezta enea, baina ni igorri nauen Aitarena.

25 Gauça hauc erran drauzquiçuet, çuequin nagoela.

*Berriz.15.26. iac.1.5.* 26 Baina Conſolaçaleac, Spiritu ſainduac, cein igorriren baitu Aitac ene icenean, harc iracatſiren drauzquiçue gauça guciac, eta orhoit eraciren drauzquiçue erran drauzquiçuedan gauça guciac.

guciac.

27 Baquea vtziten drauçuet, neure baquea emaiten drauçuet: eztrauçuet munduac emaiten duen beçala, nic emaiten çuey. Eztadila trubla çuen bihotza, eta eztadila icit.

28 Ençun duçue ecen erran drauçuedala, Banoa, eta itzuliren naiz çuetara. Baldin on bacindarizté, ſegur aleguera cintezquete ceren erran baitut, banoa Aitaganát: ecen Aita ni baino handiago da.

29 Eta orain erran drauçuet eguin dadin baino lehen, eguin datenean ſinhets deçaçuençát.

30 Eznaiz guehiagoric çuequin anhitz minçaturen: ecen ethorri da mundu hunetaco princea, eta nitan eztu deus.

31 Baina *haur eguiten da*, eçagut deçançát mũduac: ecen on daritzadala Aitari: eta nola manatu bainau Aitac, hala eguiten dut. Iaiqui çaitezte, goacen hemandic.

CAP. XV.

*1, 5 Heſſia, mahaſtiçaina. 2 Chirmendua. 4 Fructu ekarteco moiena. 7 Othoizteac nola ençun daitezqueen. 12 Batac bercea maite vkaiteco. 14 Apoſtoluac Chriſten adiſquideac eta elegituac. 18 Fidelác gaitzeſten munduac eta perſecutatzen. 26 Spiritu ſaindua promettatu.*

1 NI naiz aihen eguiazcoa, eta ene Aita da mahaſtiçaina.

2* Nitã fructu ekartẽ eztuen chirmendu gucia, kencẽ du: eta fructu e-

*Matth. 15. 13.*

karten duen gucia, chahutzen du, fructu guehiago ekar deçançát.

Lehē 13.11 3 * Ia çuec chahu çarete *nic* erran drauçuedan hitzagatic.

4 Çaudete nitan eta ni çuetan: chirmenduac berac fructuric bereganic ecin ekar deçaqueen beçala, baldin aihenean ezpadago: ezeta çuecere baldin nitan ezpaçaudete.

5 Ni naiz aihena, çuec chirmenduac: nor baitago nitan, eta ni hartan, harc ekarten du fructu anhitz: ecen ni gabe deus ecin daidiçue.

6 Baldin norbeit nitan ezpadago, egotzia da campora chirmendua beçala, eta eihartzen da: guero biltzen, eta ſura egoizten, eta erratzen.

7 Baldin baçaudete nitan, eta ene hitzac çuetan badaude, *cer-ere nahi baituçue eſca çaitezte, eta eguinen çaiçue. 1.Ioā.3.22

8 Hunetā da glorificatu ene Aita, fructu anhitz daccarraçuen: eta içanen çarete ene diſcipulu.

9 Ni Aitac maite vkā nauē beçala, nic-ere maite vkā çaituztet çuec: çaudete ene charitatean.

10 Baldin ene manamēduac beguira baditzaçue, egonen çarete ene charitateā: nic-ere neure Aitaren manamenduac beguiratu ditudā beçala, eta egoiten bainaiz haren amorioan.

11 Gauça hauc erran drauzquiçuet çuey, ene alegrançá çuetan dagoençat, eta çuen alegrançá bethé dadinçát.

Lehē 13.34 1.theſ.4.9. 1 ioan.3.11 eta 4.21. 12 * Haur da ene manamendua, batac bercea maite duçuen, *nic* maite vkā çaituztedā beçala.

13 Haur baino amorio handiagoric nehorc ez

tu,norbeitec bere arimá bere adiſquideacgatic eman deçan.

14 Çuec ene adiſquide içanen çarete,baldin eguĩ badeçaçue cer-ere nic manatzẽ baitrauçuet

15 Guehiagoric etzaituztet cerbitzari deithuren, ecen cerbitzariac eztaqui haren nabuſſiac cer eguiten duen:baina çuec deithu çaituztet adiſquide , ceren neure Aitaganic ençun dudan gucia, eçagut eraci baitrauçuet.

16 Eznauçue çuec ni elegitu, baina nic elegitu çaituztet çuec,eta ordenatu çaituztét, *ioã çaiteztençat eta fructu ekar deçaçuẽ,eta çuen fructua dagoen:cer-ere eſca baitzaquizquiote ene Aitari ene icenean,eman dieçaçuençat.

*Matth.28.19.*

17 Gauça hauc manatzen drauzquiçuet, elkar maite duçuençát.

18 Baldin munduac gaitzeſten baçaituzté, badaquiçue ecen ni çuec baino lehen gaitzetſi ykan nauela.

19 Baldin munduco bacinete,mũduac bere luena maite luque: ordea ceren ezpaitzarete mun duco,baina nic elegitu baitzaituztet mundutic, halacotz gaitz daritzue munduac.

20 Orhoit çaitezte nic erran drauçuedã hitzaz *Ezta cerbitzaria bere nabuſſia baino hãdiago: *baldin ni perſecutatu banauté,çuec-ere perſecutaturen çaituzte:baldin ene hitza beguiratu badute,çuena-ere beguiraturen duté.

*Lehẽ 13.16 mat.10.24*
*Mat.24.9.*

21*Baina gauça hauc guciac eguinen drauzquiçue ene icenagatic,ceren ezpaitute ni igorri nauena eçagutzen.

*Ber. 16.4.*

22 Baldin ethorri ezpaninz, eta berey minçatu ezpaninçaye, bekaturic ezluquete: baina orain excusaric eztuté bere bekatuaz.

23 Niri gaitz dariztanac, ene Aitari-ere gaitz daritza.

24 Baldin hayén artean nehorc bercec eguin ezdituen obrác eguin ezpanitu, bekaturic ezluquete: baina orain ikussi dituzté, eta gaitz eritzi draucute niri eta ene Aitari.

25 Baina *haur da* hayén Leguean scribatua dagoen hitza compli dadinçát, *dioela*, *Hoguẽ gabe gaitz eritzi draudate.

*Psal.35.19.*

26 *Baina nic neure Aitaganic igorriren drauçuedan Consolaçalea dathorrenean, Spiritu eguiazcoa *diot* cein ene Aitaganic proceditzen baita, harc testificaturen du niçaz.

*Lebé 14.26 luc 24.49*

27 Baina çuec-ere testificaturen duçue, ecen hatseandanic enequin çarete.

## CAP. XVI.

1 *Afflictione fideley assignatzen.* 7, 13 *Spiritu saindearen ethorteaz.* 9 *Bekatuaz.* 10 *Iustitiaz.* 11 *Iugemenduaz.* 23 *Christen icenean esca bagaitez recebituren.* 27 *Apostoluac Iaincoaren onhetsiac.* 28 *Christen ascensionea.* 33 *Baquea Christez munduco hersturarequin.*

1 GAuça hauc erran drauzquiçuet scandaliza etzaiteztençát:

2 Egotziren çaituzte synagoguetaric: baina ethorriren da demborá non norc-ere hilen baitzaituzte vste

vkanen baitu cerbitzu eguiten draucala Iaincoari.
3 Eta gauça hauc eguinen drauzquiçue, ceren ezpaitute eçagutu Aita, ez ni.
4* Baina gauça hauc erran drauzquiçuet cuey, ordu hura ethorri datenean, orhoit çaiteztēçat heçaz, ecen nic erran drauzquiçuedala: badaricere gauça hauc hatseandanic eztrauzquiçuet erran, ceren çuequin bainincén.

Lebē 15.21

5 Baina orain banoa ni igorri nauenaganát, eta çuetaric nehorc eznau interrogatzan, Norat oha?
6 Baina ceren gauca hauc erran drauzquiçuedan, tristitiác bethe du çuen bihotza,
7 Baina nic eguia erraiten drauçuet, behar duçue ni ioan nadin: ecen baldin ioan ezpanadi, Consolaçalea ezta ethorriren çuetara: baina baldin ioan banadi, igorriren dut hura çuetara.
8 Eta dathorrenean harc vençuturen du mundua bekatuz eta iustitiaz eta iugemenduz.
9 Bekatuz diot, ceren ezpaitute ni baithan sinhesten.
10 Eta iustitiaz, ceren neure Aitaganát ioaiten bainaiz, eta guehiagoric eznauçue ikussirē.
11 Eta iugemenduz, ceren mundu hunetaco princea condemnatu baita.
12 Oraino anhitz gauça dut çuey erraiteco, baina ecin egar ditzaqueçue orain.
13 Baina dathorrenean hura, Spiritu eguiazcoa *diot*, *harc* guidaturen çaituzte eguia gucitara: ecen ezta minçaturen bere buruz, baina cer-

ere ençun baituque erranen du: eta ethorteco diraden gauçác declaraturen drauzquiçue.

14 Harc nau glorificaturen: ecen enetic harturen du,eta declaraturen drauçue.

15 Aitac dituen gauça guciác,ene dirade: halacotz erran drauçuet ecen enetic harturen duela eta declaraturen drauçuela.

16 *Dembora* gutibat,eta eznauçue ikuſſiren:eta berriz *dembora* gutibat,eta ikuſſiren nauçue: ecen ni banoa Aitaganát.

17 Erran ceçaten bada haren diſcipuluetaric *batzuc* elkarren artean,Cer da erraiten draucun haur,*Dembora* gutibat,eta eznauçue ikuſſiren: eta berriz *dembora* gutibat, eta ikuſſirẽ nauçue: eta,Ecen ni banoa Aitaganát.

18 Erraiten çuten bada, Cer da erraiten duen haur *dembora* gutibat? eztaquigu cer erraitẽ duẽ

19 Eçagut ceçan bada Ieſuſec ecẽ interrogatu nahi çutela,eta erran ciecén, Elkarren artean hu neçaz galdez çaudete,ceren erran baitut,*Dembora* gutibat eta eznauçue ikuſſiren: eta berriz *dembora* gutibat eta ikuſſiren nauçue.

20 Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet, nigar eta lamentatione eguinen duçue çuec, eta mundua bozturen da:eta çuec triſte içanen çarete,baina çuen triſtitiá conuertituren da bozcariotara.

21 Emazteac,ertzẽ deneã dolore du,cerẽ harẽ ordua ethorri baita:baina erdi deneã haourtcho batez,guehiagoric ezta doloreaz orhoit, bozcarioz ceren guiçõbat mundura iayo daten.

22 Çuec-ere bada orain triſtitia duçue: baina

harçara ikussiren çaituztet, eta çuen bihotza alegueraturen da, eta çuen alegrãçá eztu nehorc edequiren çuetaric.

23 Eta egun hartan eznauçue deusez interrogaturen. *Eguiaz eguiaz erraiten drauçuet ecen cer-ere escaturen baitzaizquiote ene Aitari ene icenean, emanen drauçuela.

*Lehẽ 14.13 mat.7.7. eta 21.22. marc11.24 luc 11.9. iac.1.6.*

24 Oraindrano etzarete deus escatu ene icenean: esca çaitezte, eta recebituren duçue, çuen alegrançá complitua dençát.

25 Gauça hauc comparationez errã drauzquiçuet: baina ethorten da ordua ezpainaitzaiçue guehiagoric comparationez minçaturen, baina claroqui neure Aitaz minçaturẽ bainaitzaiçue.

26 Egun hartan ene icenean escaturen çarete, eta eztrauçuet erraiten ecen nic othoitz eguinẽ draucadala Aitari çuengatic.

27 Ecen Aitac berac maite çaituzte, cerẽ çuec ni maite vkan bainauçue, eta sinhetsi baituçue ecen Iaincoaganic ilki naicela.

28* Ilki naiz Aitaganic, eta ethorri naiz mundura: harçara vtziten dut mundua, eta banoa Aitaganát.

*Berr. 17.8*

29 Diotsate bere discipuluéc, Huná, orain claroqui minço aiz, eta comparationeric batre eztuc erraiten.

30 Orain baceaquiagu ecen badaquizquiala gauça guciac, eta eztuc mengoa nehorc interroga açan: huneçaz diagu sinhesten ecen Iaincoáganic ilki aicela.

31 Ihardets ciecẽ Iesusec, Oraĩ sinhestẽ duçue?

*Matth.26. 31. marc 14. 27.*

32 * Huná,ethorten da ordua, eta ia ethorri da, barreyaturen baitzarete batbedera cein çuenetarát,eta ni neuror vtziren bainauçue:baina eznaiz neuror:ecen Aita enequin da.

33 Gauça hauc errã drauzquiçuet,nitan baque duçuẽçat:mũduã afflictione vkanẽ duçue:baina auçue bihotz on,ni mũduari garaithu natzayo,

## CAP. XVII.

*1, 10 Christen othoitzá. 2 Vicitze eternala. 4 Christec Iaincoaren obrá complitu. 9 Christec Apostoluacgatic othoitz eguiten. 13 Christen bozcarioa. 14 Apostoluac munduaz gaitzetsi. 25 Iaincoa munduac ez eçagutu.*

1 GAuça hauc erran citzá Iesusec, eta goiti citzá beguiac cerurát,eta erran ceçan,Aitá, ethorri duc orena, glorifica eçac eure Semea, eure Semeac-ere hi glorifica eçançát.

*Matth.28. 18.*

2 * Nola eman baitraucac bothere haragui guciaren *gainean*,hari eman drauzquioán guciey, vicitze eternala eman diecençát.

3 Eta haur duc vicitze eternala,hi euror eçagut eçatẽ Iainco eguiazco,eta Iesus Christ *hic* igorri duana.

4 Nic glorificatu aut lurraren gainean:acabatu diat eguiteco eman draután obrá.

5 Eta orain glorifica neçac hic Aitá,euror bai-

than, gloria harçaz cein vkan baitut hirequin mundu haur eguin cedin baino lehen.
6 Manifestatu dirauheat hire icena *hic* niri mundutic eman drauztán guiçoney: hireac cituán, eta niri hec eman drauzquidac, eta hire hitza beguiratu dié.
7 *Orain eçagutu dié, ecen niri eman drauzquidán gauça guciac hireganic diradela.
Lebē 16.29
8 Ecen niri emā drauzquidán hitzac hæy eman drauzteat: eta hec recebitu citié, eta eçagutu dié eguiazqui ecen ni hireganic ilki naicela, eta sinhetsi dié ecen hic igorri nauala.
9 Nic hecgatic othoitz eguiten diat: eztiat munduagatic othoitz eguiten, baina hic niri eman drauzquidanacgatic, ecen hiriac dituc.
10 Eta ene gauça guciac hire dituc, eta hireác ene, eta glorificatu içan nauc hetan.
11 Eta guehiagoric eznauc munduan, baina hauc munduan dituc, eta ni hiregana ethorten nauc. Aita saindúa, beguiraitzac eure icenean, niri eman drauzquidanac, bat diradençat, gu beçala.
12 Hequin munduan nincenean, nic beguiratzen nitián hec hire icenean: niri eman drauzquidanac, nic beguiratu citiat, eta hetaric batre eztuc galdu içan, perditionezco semea baicen: *Scripturá compli ledinçát.
Psal. 109.8
13 Eta orain hiregana ethorten nauc, eta gauça hauc erraiten citiat munduan, dutençát ene alegrança complitua berac baithan.
14 Nic eman dirauheat hæy hire hitza, eta mun-

duac hec gaitzetsi vkan citic, ceren ezpaitirade mundutic, nola ni-ere ezpainaiz mundutic.

15 Eztiat othoitz eguitē ken ditzán hec mundutic, baina beguira ditzán gaichtotic.

16 Ezdituc mundutic, nola ni-ere ezpainaiz mundutic.

17 Sanctificaitzac hec eure eguiáz: hire hitza duc eguiá.

18 Nola ni igorri bainauc mundura, nic-ere ĩgorri citiat hec mundura.

19 Eta hecgatic sancti ficatu diát neure buruä hec-ere sanctificatuac diradençát eguiáz.

20 Eta eztiat hecgatic solament othoitz eguiten, baina hayén hitzaz ni baithan sinhetsiren dutenacgatic-ere *bay*:

21 Guciac bat diradençát, nola hi Aita *baitaiz* nitan, eta ni hitan, hec-ere gutā bat diraden: sinhets deçançat mũduac ecen hic ni igorri nauäla.

22 *Hic* niri eman drautan gloriá, nic-ere eman diraueat hæy: bat diradençát gu-ere bat garen beçala.

23 Ni *nauc* hetan, eta hi nitan, perfecto diradençát bat berean, eta eçagut deçan munduac ecen hic ni igorri nauala, eta maite dituala hec ni maite vkan nauán beçala.

Lehē 12.26 24 *Aitá, niri eman drauzquidanac, nahi diat non bainaiz ni, hec-ere diraden enequin: contempla deçatēçát ene gloria *hic* niri eman drautána, ecen maite vkan nauc mundua funda cedin bain o lehendanic.

25 Aita iustoá, munduac hi ezau eçagutu, bai-

na nic hi eçagutu aut, eta hauc eçagutu dié ecen hic ni igorri nauäla.

26 Eta eçagut eraci diraueat hire icena, eta eçagut eraciren: *hic* niri on eritzi draután onheriztea, hetan dençát, eta ni hetan.

CAP. XVIII.

*1 Christ baratzean, 2 Iudasez traditzen. 13 Annasgana eta Caiphasgana eramaiten. 15 Pierrisec iarreiquiric, 17, 25 harçaz vkatzen. 19 Caiphasec Christ interrogatzen, 28 guero Pilatgana dute eramaiten. 31, 37 Christec Iuduen Regue dela confessatzen. 37 Certara ethorri den Christ mundura. 40 Barabbas largatu.*

1 GAuça hauc erran cituenean, ilki cedin Iesus bere discipuluequin * Cedrongo torrétaz berce aldera, non baitzén baratzebat, ceinetan sar baitzedin hura eta haren discipuluac.

*Matth.26.36. marc 14.32. luc 22.39. 2.reg.23.24.*

2 Eta baçaquian leku hura Iudasec-ere, ceinec traditzen baitzuen hura: ecen anhitzetan Iesus bildu içan cen hara bere discipuluequin.

3 *Iudas bada harturic soldadozco bandabat, eta Sacrificadore principaletaric eta Phariseuetaric officierac, ethor cedin hara lanternequin eta torchoequin eta harmequin.

*Matth. 26 47. marc 14.43. luc 22.47.*

4 Iesusec bada çaquizquialaric haren gainera ethorteco ciradenen gauça guciac, aitzinaraturic erran ciecén, Noren bilha çabiltzate?

5 Ihardets cieçoté, Iesus Nazarenoren. Dioste Iesusec, Ni naiz. Eta hequin cegoen Iudas-ere

ceinec traditzen baitzuen hura.

6 Bada erran cerauenean, Ni naiz, guibelerat citecen, eta eror citecen lurrera.

7 Orduan berriz interroga citzan, Noren bilha çabiltzate? Eta hec erran ceçaten, Iesus Nazarenoren.

8 Ihardets ceçan Iesusec, Erran drauçuet ecen ni naicela: bada baldin ene bilha baçabiltzate, vtzitzaçue hauc ioaitera.

*Iohã 17.12* 9 Erran çuen hitza compli ledinçát, *Niri *hic* eman drauzquidanetaric, eztiát galdu batre.

10 Eta Simon Pierrisec nola baitzuen ezpatá, idoqui ceçan hura, eta io ceçan Sacrificadore subiranoaren cerbitzaria, eta ebaqui cieçón escuineco beharria: eta cerbitzariaren icena cen Malchus.

11 Erran cieçón bada Iesusec Pierrisi, Eçarrac eure ezpatá maguinán: ala eztut edanen Aitac niri eman drautan copa?

12 Orduan bandác eta capitainac eta Iuduen officieréc elkarrequin hatzaman ceçaten Iesus, eta esteca ceçaten.

*Luc 3.2.* 13 Eta eraman ceçaten lehenic *Annasgana: (ecen Caiphasen guinharreba cen, cein baitzén vrthe hartaco Sacrificadore subirano) eta harc igor ceçan hura estecaturic Caiphas Sacrificadore subiranoagana.

*Iohã 11.50* 14 Eta Caiphas cen *conseillu eman cerauena Iuduey ecen probetchu cela guiçombat hil ledin populuagatic.

*Matth. 26 58. marc 14. 54. luc 22.54.* 15 *Eta iarreiquiten çayón Iesusi Simon Pier-

ris, eta berce discipulubat, eta discipulu hura cen Sacrificadore subiranoaren eçaguna, eta sar cedin Iesusequin batean Sacrificadore subiranoaren salán.
16 Baina Pierris borthaldean cãpotic cegoen. Ilki cedin bada berce discipulu Sacrificadore subiranoaren eçaguna, eta minça cequión nescato borthalçainari, eta sar eraci ceçan Pierris.
17 Eta erran cieçón Pierrisi nescato borthalçainac. Ez othe aiz hi-ere guiçon hunen discipuluetaric? Dio harc, Ez naun.
18 Eta ceuden han cerbitzariac eta officierac ikatz kamborra eguinic, ecen hotz ari cen, eta berotzen ciraden: eta cen hequin Pierris-ere eta berotzen cegoen.
19 Sacrificadore subiranoac bada interroga ceçan Iesus bere discipuluéz eta bere doctrináz.
20 Ihardets cieçón Iesusec, Ni publicoqui minçatu içan natzayóc munduari, nic bethiere iracatsi vkan diat synagogán eta templean, nora Iuduac alde gucietaric biltzen baitirade, eta secretuan eznauc minçatu deus.
21 Cergatic interrogatzen nauc ni? interrogaitzac nic cer minçatu natzayen ençun dutenac: hará, hec ciaquié cer erran dudan nic.
22 Eta gauça hauc harc erran cituenean, present ciraden officieretaric batec cihor colpebat eman cieçón Iesusi, cioela, Horrela ihardesten draucac Sacrificadore subiranoari?
23 Ihardets cieçón Iesusec, baldin gaizqui minçatu banaiz, testifica eçac gaizquiaz: eta baldin

vngui *erran badut*,cergatic ioiten nauc?

Matth.26. 57. marc 14. 53. luc 22.54.

24 *Orduan igor ceçan hura Annasec esteca-turic Caiphas Sacrificadore subiranoagana.

Matth.26. 69. marc 14. 66. luc 22.55.

25 *Eta cegoen han Simon Pierris, eta bero-tzen cen: erran cieçoten bada hari, Ez othe aiz hi-ere haren discipuluetaric?vka ceçan harc, eta erran ceçan,Ez naiz.

26 Diotsa hari Sacrificadore subiranoaren cer-bitzarietaric cembeitec,Pierrisec beharria eba-qui ceraucanarẽ ahaide batec,Ez aut nic hi ikus-si baratzean harequin?

27 Orduan berriz vka ceçan Pierrisec,eta ber-tan oillarrac io ceçan.

Mat.27.2. marc 15.1. luc 23.1. act.10.28. eta 11.3.

28 *Guero eraman ceçaten Iesus Caiphasga-nic Pretoriora: eta cen goiça, eta berac etzite-cen sar Pretoriora, satsu ezliteceẽçat, baina Baz-coa ian leçatençat.

29 Ilki cedin bada Pilate hetara campora, eta erran ceçan,Cer accusatione daccarqueçue gui-çon hunen contra?

30 Ihardets ceçaten eta erran cieçoten,Baldin hori gaizqui-eguile ezpaliz, ezquindrauquẽán hiri liuratu.

31 Dioste orduan Pilatec, Har eçaçue haur çuec, eta çuen Leguearen arauez condemna e-çaçue.Orduan erran cieçoten Iuduéc,Eztuc so-ri guretzát nehoren hiltzea.

Matth.20. 19. Matth.27. 11. marc15.2. luc23.3.

32 **Haur cen* *Iesusen hitza compli ledinçát, cein erran baitzeçan aditzera emaiten çuela cer herioz hil behar luen.

33 *Sar cedin bada berriz Pretoriora Pilate,

eta dei ceçan Iesus, eta erran cieçón, Hi aiz Iuduen Reguea?
34 Ihardets cieçon Iesusec, Eurorren burutic hic hori erraitẽ duc, ala bercéc errã draue niçaz?
35 Ihardets ceçan Pilatec, Ala ni Iudu naiz? eure nationeac eta Sacrificadore principaléc liuratu arauté: cer eguin duc?
36 Ihardets ceçan Iesusec, Ene resumá eztuc mundu hunetaric: baldin mundu hunetaric baliz ene resumá, ene gendeac combati litezquec Iuduey liura eznendinçát: baina orain ene resumá eztuc hemengo.
37 Erran cieçón orduan Pilatec, Regue aiz bada hi? Ihardets ceçan Iesusec, Hic dioc ecen Regue naicela ni. Ni hunetacotzát iayo içan nauc, eta hunetacotzát ethorri içan nauc mundura, testimoniage demodãçát eguiari. Eguiatic den guciac, ençuten dic ene voza.
38 Diotsa Pilatec, Cer da eguia? Eta haur erran çuenean, berriz ilki cedin Iuduetara, eta dioste, Niç eztut erideiten haur baithan causaric batre.
39 *Eta costumabat baituçue bat larga dieçaçuedan Bazcoz: nahi duçue bada larga dieçaçuedan Iuduen Reguea?
40 *Oihuz iar citecen bada berriz guciac, cioitela, Ez hori, baina Barabbas: eta cen Barabbas gaichtaguin-bat.

*Matth. 27 15. marc 15.6. luc 23.17.*

*Matth. 27. 20. act. 3 14.*

CAP. XIX.

*1 Christ açotatu. 2 Elhorriz coroatu. 10 Pilaten puissançá Christen gainean. 16 Christ emán içan crucifica ledinçát. 19 Haren crutzeco scribua. 27 Ioannesi bere ama gommendatzen Christec, 30 Spiritua rendatzen. 34 Haren seihetsaçulhatu. 38 Ioseph Arimatheacoa. 39 Nicodemo. 40 Christ ohortze.*

*Matth.27.26. marc 15.15*

1* ORduan bada har ceçan Pilatec Iesus,eta açota ceçan.
2 Eta gendarmeséc plegaturic coroabat elhorriz eçar ceçaten haren buru gainean, eta escarlatazco abillamendu batez vezti ceçaten.
3 Eta erraitē çutén,Vngui hel daquiala Iuduen Regueá.Eta cihor vkaldiz ceraunsaten.
4 Ilki cedin bada berriz Pilate campora, eta erran ciecén,Huná, ekarten drauçuet campora, eçagut deçaçuençat ecen eztudala hunetan hoguenic batre erideiten.
5 Ilki cedin bada Iesus campora, elhorrizco coroá çacarquela, eta escarlatazco abillamendua.Eta dioste *Pilatec*,Huná guiçona.
6 Baina ikussi çuteneā hura Sacrificadore principaléc eta officierée, oihu eguin ceçaten, cioitela,Crucifica eçac, crucifica eçac. Dioste Pilatec, Har eçaçue ceuroc, eta crucifica eçaçue : ecen nic eztut erideiten haur baithan hoguenic.
7 Ihardets cieçoten Iudućc, Guc Leguea diagu, eta gure Leguearen araūez hil behar dic, ecen Iaincoaren Seme bere buruā eguin dic.

8 En-

8 Ençun çuenean bada Pilatec hitz haur, beldurrago cedin.

9 Eta ſar cedin Pretoriora berriz,eta erran cieçón Ieſuſi, Nongo aiz hi? Eta Ieſuſec repoſtaric etzieçón eman.

10 Diotſa bada Pilatec, Niri ezatzait minço? Eztaquic ecẽ bothere dudala hire crucificatzeco,eta bothere dudala hire largatzeco?

11 Ihardets ceçan Ieſuſec, Ezuque bothereric batre ene contra, baldin eman ezpalitzaic gainetic:halacotz, ni hiri liuratu narauanac,bekatu handiagoa dic.

12 Handic harat baçabilan Pilate hura largatu nahiz: baina Iuduac heyagoraz ceuden, Baldin hori larga badeçac, ezaiz Ceſaren adiſquide: *ecen* bere buruä regue eguiten duen gucia contraſtatzen ciayóc Ceſari.

13 Pilatec bada ençunic hitz haur, eraman ceçan cãpora Ieſus, eta iar cedin alki iudicialean, Pabadura, eta Hebraicoz Gabbatha deitzen den lekuan.

14 Eta cen *orduan* Bazcoco preparationea, eta ſey orenén inguruä: orduan dioſte *Pilatec* Iuduey,Huná çuen Reguea.

15 Baina hec oihu ceguiten, Ken, ken, crucifica eçac.Dioſte Pilatec, çuen Reguea crucificaturen dut? Ihardets çaçaten Sacrificadore principaléc,Eztiagu regueric Ceſar baicen.

16 Orduan bada eman ciecén crucifica ledinçát. Eta har ceçaten Ieſus, eta eraman ceçaten.

17 *Eta *hura* bere crutzea çacarquela ethor ce-

*Matth.27.33. marc 15.22. luc 23.33.*

din Bur-heçur plaça deitzē denera, eta Hebraicoz Golgotha.

18 Non crucifica baitzeçaten hura, eta harequin berceric biga, alde batetic eta bercetic, eta Iesus artean.

19 Eta ſcriba ceçan titulubat Pilatec, eta eçar ceçan harē crutze gaineā: eta cen ſcribatua, IESVS NAZARENO IVDVEN REGVEA.

20 Titulu haur bada Iuduetaric anhitzec iracurt ceçatén: ecen ciuitate aldean cen Ieſus crucificatu cen lekua: eta cen ſcribatua Hebraicoz, Grecquez, *eta* Latinez.

21 Ciotſaten bada Pilati Iuduén Sacrificadore principaléc, Ezteçála ſcriba Iuduén Regue: baina berac erran duela, Iuduén Reguea naiz.

22 Ihardets ceçan Pilatec, Scribatu dudana, ſcribatu dut.

Matth.27. 35. marc 15. 24. luc 23. 33.

23 *Bada gendarmeſéc Ieſus crucificatu çutenean har citzaten haren abillamendúac, (eta eguin citzaten laur parte, gendarmeſetaric batbederari ceini bere partea) iaca-ere *har ceçaten*: eta iacá cen ioſtura gabe gainetic gucia ehoa.

24 Erran ceçaten bada bere artean, Ezteçagula hura erdira, baina daguigū harçaz çorthe ceinen içanen den: *eta haur*, Scriptura compli ledinçát, dioela, *Ene abillamenduac partitu vkan dituzté bere artean, eta ene abillamēduaren gainean çorthe egotzi vkan duté. Bada gendarmeſéc gauça hauc eguin citzaten.

Pſal.22.19

25 Eta ceuden Ieſuſen crutzearen aldean, haren ama eta haren amaren ahizpá, Maria Cleo-

paſena eta Maria Magdalena.
26 Ikus citzanean bada Ieſuſec *bere* ama, eta maite çuen diſcipulua han cegoela, diotſa bere amari, Emazteã, horrá hire ſemea.
27 Guero diotſa diſcipuluari, Horrá hire ama. Eta orduandanic recebi ceçan hura diſcipuluac beregana.
28 Guero nola baitzaquian Ieſuſec ecen *berce* gauça guciac ia complitu ciradela, *compli ledinçát Scripturá, erran ceçan, Egarri naiz.

*Pſal.69.22 mat.27.48*

29 Eta vncibat cen han vinagrez betheric eçarria. Eta hec bethe ceçaten ſpongiabat vinagrez, eta hiſſopoaren inguruän eçarriric, preſenta cieçoten ahora.
30 Eta hartu çuenean Ieſuſec vinagrea, erran ceçan, *Gucia* complitu da: eta buruä beheraturic renda ceçan ſpiritua.
31 Orduan Iuduéc ezlaudençat crutzean gorputzac Sabbathoan, ceren orduan baitzén preparationeco eguna: (ecẽ Sabbath hartaco egun handia cen) othoitz ceguioten Pilati hauts litecen hayén çangoac, eta ken litecen.
32 Ethor citecen bada gendarmeſac, eta hauts citzaten lehenaren çangoac, eta berce harequin crucificatu cenarenac.
33 Baina Ieſuſgana ethor citecenean, ikuſſiric ia hura hil cela, etzitzaten hauts haren çangoac.
34 Baina gendarmeſetaric batec dardoaz haren ſeihetſa iragan ceçan, eta bertan ilki cedin odol eta vr.
35 Eta ikuſſi duenac teſtificatu vkan du, eta e-

guiazcoa da haren teſtimoniagea: harc badaqui ecen eguiác erraiten dituela, çuec-ere ſinhets deçaçuençát.

36 Ecen gauça hauc eguin içan dirade Scriptura compli ledinçát, *Ezta hautſiren haren heçurric.

Exo.12.46 nom.9.12.

37 Eta berriz berce Scriptura batec erraiten du,*Ikuſſiren duté nor çulhatu dutén.

Zac.12.10

38 *Gauça hauen ondoan othoitz eguin ciecón Pilati Ioſeph Arimatheacoac (cein baitzén Ieſuſen diſcipulu, baina ichilizco, Iudućn bel-durrez) ken leçã Ieſuſen gorputza: eta permetti ciećon Pilatec. Ethor cedin bada eta ken ceçan Ieſuſen gorputza.

Matth.27.57. marc 15.42. luc 23.50.

39 *Eta ethor cedin Nicodemo-ere (ethorri içan cena Ieſuſgana gauaz lehenic) ekartẽ çuela myrrhazco eta aloeſezco quaſi ehun liberataco mixtionebat.

Leben 3.2.

40 Har ceçaten orduan Ieſuſen gorputza, eta lot ceçaten hura mihiſtoihalez aromatezco vſſainequin, nola coſtuma baitute Iuduéc ohorzteco.

41 Eta *hura* crucificatu içan cen leku hartan cen baratzebat, eta baratzean monument berribat, ceinetan oraino ezpaitzén nehor eçarri içan.

42 Han bada, Iuduén preparationeco *egunaren* cauſaz, ceren hurbil baitzén monumenta, eçar ceçaten Ieſus.

CAP. XX.

1 *Maria Magdalena monumentera.* 3 *Pierrisec eta Ioannesec hara laster eguiten.* 11, 12 *Bi Aingueru Mariac ikusten.* 14 *Iesus hari minçatzen.* 18 *Harc denuntiatzen Christ resuscitatu dela.* 22, 23 *Christec Spiritu saindua eta gakoac discipuluéy emaiten.* 25, 26 *Thomas incredul.* 31 *Euangelioa cergatic scribatu.*

1* ETa Sabbathoén lehen eguneã Maria Magdalena ethorten da goicean, oraino ilhun celaric, monumentera: eta ikusten du harria monumentetic aldaratua.

Marc 16. 1 luc 24. 1.

2 Orduan laster eguiten du eta ethorten da Simõ Pierrisgana, eta berce discipulu Iesusec maite çuenagana, eta dioste, Kendu duté Iauna monumentetic, eta eztaquigu non eçarri dutén.

3 Ilki cedin bada Pierris, eta berce discipulu hura, eta ethor citecen monumentera.

4 Eta lasterca cioacen biac elkarrequin: baina berce discipulu hura aitzin cequión Pierrisi, eta lehen ethor cedin monumentera.

5 Eta beheitituric ikus citzan oihalac aldaratuac: badaric-ere etzedin sar.

6 Ethorten da orduan Simon Pierris hari darreicola, eta sar cedin monumentera, eta ikus citzan oihalac *han* eçarriac:

7 Eta haren buru gainean içan cen erobitcheta, ez oihalequin eçarria, baina appart biribilgatua leku batetara.

8 Orduan bada ſar cedin berce diſcipulu monumentera lehenic ethorri içan cen hura-ere, eta ikus ceçan, eta ſinhets ceçan.

9 Ecen oraino etzaquiten Scripturá, ecen behar cela hura hiletaric reſuſcita ledin.

10 Itzul citecen bada diſcipuluac beretarat.

Matt.28.1 marc 16.5.

11 * Baina Maria cegoen monumentaren aldean campotic, nigarrez: bada nigarrez cegoela, beheiti cedin monumentera:

12 Eta ikus citzá bi Aingueru churiz veztituac, iarriric ceudela, bata burura eta bercea oinetara, Ieſuſen gorputza etzan içan cen lekuan.

13 Eta *hec* erran cieçoten, Emazteá, cergatic nigarrez ago? Dioſte, *Ceren* kendu baitute ene Iauna, eta ezpaitaquit non eçarri dutén.

14 Eta haur erran çuenean itzul cedin guibelerát, eta ikus ceçan Ieſus han cegoela, eta etzaquian Ieſus cela.

15 Diotſa Ieſuſec, Emazteá, cergatic nigarrez ago? noren bilha abila? Harc vſtez ecen baratzeçaina cela, diotſa, Iauna, baldin hic eraman baduc hura, erradac non eçarri duán: eta nic kenduren diat.

16 Diotſa Ieſuſec, Mariá: Itzuliric harc diotſa, Rabboni, erran nahi baita, Magiſtrua.

17 Diotſa Ieſuſec, Ezneçanala hunqui: ecen oraino eznaun igan neure Aitagana: baina habil ene anayetara, eta erran iecén, Igaiten naiz neure Aitagana, eta çuen Aitagana, eta neure Iaincoagana eta çuen Iaincoagana.

18 Ethor cedin Maria Magdalena contatzen

cerauela diſcipuluey ecen ikuſſi çuela Iauna, eta *harc* gauça hec erran ceraützala.

19 *Eta arraſtu cenean Sabbathoén aſteco lehen egun hartã, eta borthác ertſiac ceudela, non bilduac baitziraden diſcipuluac Iuduén beldurrez, ethor cedin Ieſus eta gueldi cedin hayén artean, eta dioſte, Baquea *dela* çuequin.

Matth. 16. 14. luc 24. 36. 1. cor. 15. 1.

20 Eta haur erran çuenean, eracuts cietzén eſcuac eta bere ſeihetſa: eta aleguera citecen diſcipuluac ikuſſiric Iauna.

21 Eta erran ciecén berriz, Baquea dela çuequin: *ni Aitac igorri nauen beçala, nic-ere igorten çaituztet çuec.

Matth. 28. 18. marc 16. 15

22 Eta haur erran çuenean, hats eman ciecén eta erran, Recebi eçaçue Spiritu ſaindua.

23 *Noren-ere bekatuac barkaturen baititu-çue, barkatzen çaizte hæy: eta norenac-ere eduquiren baitituçue, eduquiac dirade.

Mat. 18. 18

24 Eta Thomas, hamabietaric bat, Didymus deitzẽ dena, etzén hequin Ieſus ethorri cenean.

25 Erran cieçoten bada hari berce diſcipuluéc, Ikuſſi diagu Iauna. Eta harc erran ciecén, Baldin ikus ezpadeçat haren eſcuetan itzén ſeignalea, eta eçar ezpadeçat neure erhia itzén lekuã, eta eçar ezpadeçat neure eſcua harẽ ſeyhetſean, eztut ſinhetſiren.

26 Eta çortzi egunen buruän berriz ciraden haren diſcipuluac barnean, eta Thomas hequin: ethor cedin Ieſus borthác ertſiac ceudela, eta gueldi cedin *hayén* artean, eta erran ceçan, Baquea *dela* çuequin.

27 Guero diotſa Thomaſi, Eçarrac eure erhia hemen, eta ikus itzac ene eſcuac: eta heda eçaç eure eſcua, eta eçarrac ene ſeihetſean: eta ezaicela ſinheſte-gabe, baina ſinheſte-dun.

28 Eta ihardets ceçan Thomaſec: eta errã ciecón, Ene Iauna eta ene Iaincoá.

29 Diotſa Ieſuſec, Ceren ikuſſi bainauc, Thomas ſinheſten duc: dohatſu *dituc* ikuſſi ez, eta ſinhetſi dutenac.

Ber.21.25 30 * Bada anhitz berce ſignoric-ere eguin ceçan Ieſuſec bere diſcipuluén aitzinean, cein ezpaitirade ſcribatuac liburu hunetan.

31 Baina gauça hauc ſcribatu içan dirade, ſinhets deçaçuençát ecen Ieſus dela Chriſt Iaincoaren Semea, eta ſinheſten duçuela vicitzea duçuençát haren icenean.

CAP. XXI.

*1 Chriſt aguertzen diſcipluéy, arrain hatzamaiten ari ciradela. 6 Arrain hatzamanac. 18 Pierriſen herioa Chriſtec aitzinetic erraiten, 20 eta Ioanneſenaz Pierris informatzen. 25 Scribatu ezten gauçaric anhitz eguin Ieſuſec.*

1 GVero manifeſta cequién berriz Ieſus diſcipuluey Tiberiaco itſas aldean, manifeſta cedin bada hunela:

2 Ciraden elkarrequin Simon Pierris, eta Thomas Didymus deitzen dena, eta Nathanael, cein baitzén Cana Galileaco, eta Zebedeoren *ſemeac*, eta haren diſcipuluetaric

berceric biga.
3 Diofte Simon Pierrifec, Banoa arrainçara. Diotfate, Baguioaçac gu-ere hirequin. Parti citecen, eta igan citecen vncira bertan: eta gau har tan etzeçaten deus har.
4 Baina goiça ethorri cenean, eriden cedin Iefus vr bazterrean: badaric-ere etzeçaten eçagut difcipuluéc Iefus cela.
5 Diofte bada Iefufec, Haourrác, iaquiricbatre badúçue? Ihardets cieçoten, Ez.
6 Eta harc diofte, Egotzaçue farea vnciarē efcuineco aldera, eta eridenē duçue. Egotz ceçaten bada, eta guehiagoric ecin hura tira ceçaqueten arrainén anhitzez.
7 Diotfa bada Iefufec maite çuē difcipulu harc Pierrifi, Iauna duc. Simon Pierris bada, ençun çuenean ecen Iauna cela, *bere* iuppáz ingura cedin (ceren billuzgorria baitzén) eta egotz ceçan bere buruä itfaffora.
8 Eta berce difcipuluac vncian ethor citecen, (ecen etziraden lurretic vrrun, baina ber-ehun befforen inguruä) tiratzun çutela farea arrainez *bethea*.
9 Eta lurrera iautfi ciradenean ikus citzaten ikatzac eçarriac, eta arraina gainean eçarria eta oguia.
10 Diofte Iefufec, Ekarçue orain hartu dituçuen arrainetaric.
11 Igan cedin Simon Pierris, eta tira ceçan farea lurrera, ehun eta berroguey eta hamairur arrain handiz bethea: eta hambat bacen-ere, e-

tzedin ethen ſarea.

12 Dioſte Ieſuſec, Çatozte barazcal çaitezte. Eta diſcipuluetaric batre etzayón venturatzen interrogatzera, Hi nor aiz? çaquitelaric ecē Iauna cela.

13 Ethorten da bada Ieſus eta hartzē du oguia eta emaiten draue, eta arrainetic halaber.

14 Haur *cen* ia heren aldia Ieſus bere diſcipuluey manifeſtatu içan çayena hiletaric reſuſcitatuz gueroztic.

15 Bada barazcaldu ciradenean, diotſá Simon Pierriſi Ieſuſec, Simon Ionarē *ſemeá*, hauc baino hobe dariztac? Diotſa, Bay Iauna: hic badaquic ecen on dariçadala. Diotſa, Bazcaitzac ene bildotſac.

16 Diotſa are berriz, Simon Ionaren *ſemeá*, on dariztac niri? Diotſa, Bay Iauna, hic badaquic ecē on dariçadala. Diotſa, Bazcaitzac ene ardiac.

17 Erraiten drauca herenean, Simon Ionaren *ſemeá*, on dariztac niri? Triſte cedin Pierris ceren errā baitzieçón herenean, On dariztac niri? Eta erran cieçón, Iauna, hic gauça guciac badaquizquic, hic badaquic ecen on dariçadala. Diotſa Ieſuſec, Bazcaitzac ene ardiac.

2. *Tier.* 1. 14.

18 *Eguiaz eguiaz erraiten drauat, gazteago incenean, guerricatzen incén, eta bahindoā norat nahi baihincén: baina çahar adinean, hedaturen dituc eure eſcuac, eta bercec guerricaturen au, eta eramanen au nahi eztuqueañ lekura.

19 Eta haur errā ceçā, aditzera emaiten çuela cer herioz glorificaturē çuen Iaincoa. Eta haur

erran çuenean, diotsa, Arreit niri.

20 Itzuliric Pierrisec ikus ceçan Iesusec maite çuen discipulu hura, iarreiquiten cela, * cein sustengatu-ere baitzén affarian harē estomac gainera, eta erran baitzeçan, Iauna, nor da hi traditzen auena?

Lebē 13.23

21 Haur bada ikussi çuenean Pierrisec, diotsa Iesusi, Iauna, eta haur cer?

22 Diotsa Iesusec, Baldin hori nahi badut dagoen nathorreno, cer mengoa duc hic? hi arreit niri.

23 Eta ilki cedin hitz haur anayén artean ecen discipulu hura etzela hilen: baina etzeraucan erran Iesusec, eztuc hilen: baina, Baldin hori nahi badut dagoen nathorreno, cer mengoa duc hic?

24 Haur da discipulu hura ceinec testificatzen baitu gauça hauçaz, eta gauça hauc *harc* scribatu ditu: eta badaquigu ecen eguiazco dela haren testimoniagea.

25 *Baina bada anhitz berce gauçaric-ere Iesusec eguinic, cein baldin scribatuac balirade punctuz punctu, munduac-ere eztut vste eduqui litzaqueela scriba litezquen liburuäc.

Lebē 20.30

# APOSTOLV
## SAINDVEN
## ACTEAC.

CAP. I.

*1 Spiritu sainduaz batheyatzea. 8 Apostoluac Christen testimonio. 9 Christ cerurat igaiten. 13 Apostoluac Spiritu sainduaren beguira egon. 16 Iudasen orde baten elegitzeaz. 18 Nola Iudasec bere buruä vrkatu çuen. 24 Apostoluen othoitzá. 26 Matthias elegitu.*

1 LEHENIC minçatu içan nauc, Theophile, Iesus eguiten eta iracasten hassi içan cen gauça guciéz.

2 Elegitu cituen Apostoluey Spiritu sainduaz manamenduac emanic, goiti recebitu cen egunerano.

3 Ceiney eracutsi-ere baitu bere buruä viciric bere passioneaz gueroztic anthitz seignale segurez, berroguey egunez hæy eracusten eta Iaincoaren resumáz minçatzen çayela.

*Luc 24.49* *ioan.14.25* 4 Eta bildu cituenean, *mana citzan ezlitecen parti Ierusalemetic, baina iguriqui leçaten Aita rẽ promessa, Cein, *dio*, ençũ baituçue eneganic.

*Mat.3.11.* 5 Ecẽ* Ioannesec batheyatu du vrez, baina çu-

éc batheyaturen çarete Spiritu ſainduaz anhitz egun gabe.

*marc.1.8 luc 3.16. ioan.1.26. berriz 2.2. eta 11.16. eta 19.4.*

6 Hec bada bildu ciradenean interroga ceçaten hura, cioitela, Iauna, dembora hunetan bere ſtaturaco draucac reſumá Iſraeli?

7 Eta erran ciecén, Ezta çuey emã Aitac bere bothere proprian eçarri dituen demborén edo ſaſoinén eçagutzea.

8 *Baina recibiturẽ duçue çuen gainera ethorriren den Spiritu ſainduaren verthutea, eta içanen çaizquidate teſtimonio Ieruſalemẽ, eta Iudea guciã, eta Samariã, eta lurrarẽ bazterrerano

*Berriz 2.2*

9 *Eta gauça hauc erran cituenean, hec çacuſſatela altcha cedin: eta hodey batec harturic eraman ceçan hayén beguietaric.

*Luc 24.51*

10 Eta cerurat beguiac fincatuac çadutzatela hura ioaten cenean, huná, bi guiçon preſenta citecen hayén aitzinean veztidura churitan:

11 Ceinéc erran-ere baitzeçaten, Galileaco guiçonác, cergatic çaudete, cerurat beha çaudetela? goiti çuetaric cerurat recebitu den Ieſus haur, hala ethorriren da nola ikuſſi baituçue cerurat ioaiten.

12 Orduan itzul citecen Ieruſalemera Oliuatzetaco deitzen den menditic, cein baita Ieruſalemeco aldean, Sabbath baten bidean.

13 Eta ſarthu içan ciradeneã, igan citecẽ gambera gora batetara non baitzeuden Pierris eta Iacques, Ioannes eta Andriu, Philippe eta Thomas, Bartholomeo eta Mattheu, Iacques Alpheoren *ſemea* eta Simon Zelotes, eta Iuda Iac-

quesen *anayea.*

14 Hauc guciéc perseueratzen çutén gogobatez othoitzatan eta orationetan emaztequin, eta Iesusen ama Mariarequin, eta* haren anayequin,

*Diot, Iesusen.*

15 Eta egun hetã iaiquiric Pierrisec discipuluẽ artean, erran ceçan (eta cen hã berean compainiabat seioguey personaren ingurucoric)

16 Guiçon anayeác, complitu behar cen Scriptura haur, *cein aitzinetic erran baitu Spiritu sainduac Dauid-en ahoz, Iudasez, cein içan baita Iesusen hatzamailén guidari:

*Psal.41.9. ioan.13.18*

17 Ecen contuco cen gurequin, eta recebitu vkã çuen administratione hunetaco portionea.

18 Harc bada acquisitu du landabat iniquitatezco alocairutic, *eta bere buruä egotziric erditic leher eguin vkan du, eta vrratu içan dirade haren halsar guciac.

*Mat.27.5.*

19 Eta *gauça haur* eçagutu içan da Ierusaleme co habitant guciéz: hala non deithu içan baita lãda hura hayén lengoage propriz, Haceldama: erran nahi baita, odol landa.

20 Ecen scribatua da Psalmuen liburuän, *Eguin bedi haren habitationea desert, eta eztén han habita dadinic. Eta,* Haren administrationea har deçan berce batec.

*Psal.69.26*

*Psal. 109.8*

21 Behar da beraz gurequin bildu içan diradẽ guiçon hautaric, Iesus Iauna gure artean ioan eta ethorri içan den dembora gucian,

22 Hassiric Ioannesen Baptismotic, gureganic goiti recebitu içã den egunerano, bat eguĩ dadĩ.

haren resurrectionearen testimonio gurequin.
23 Presenta citzaten bada biga, Ioseph, Barsabas deitzen cena, cein icen goiticoz Iusto deithu içan baita, eta Matthias.
24 Eta othoizte eguiten çutela erran ceçaten, Hic Iauna guciẽ bihotzac baiteçaguzquic, eracutsac cein elegitu duán bi hautaric,
25 Har deçançát ministerio hunetaco eta Apostolutassuneco, portionea, ceinetaric erauci içan baita Iudas, ioan ledinçat bere lekurát.
26 Eta egotz citzaten hayén çortheac, eta eror cedin çorthea Matthiasen gainera, eta consentimẽdu batez eçar cedĩ hameca Apostoluẽ cõtuã

CAP. II.

*1 Spiritu saindua igorri. 4 Apostoluac lengoage arrotzez minço. 14 Pierrisen predicationea. 21 Saluamendua. 24 Christen resurrectionea. 36 Iesus dela Christ. 38 Penitentiá. Baptismoa. 39 Christezco promessac. 42 Doctriná. Communionea. Oguiarẽ haustea. Orationea. 44 Bihotzezco eta onhassunezco battassuna.*

1 ETa ethorri cenean Mendecoste eguna, guciac ciradẽ gogo batez leku batetan berean.
2 Eta eguin cedin subitoqui cerutic soinu bat botheretsuqui heldu den haice baten ançora, eta bethe ceçan etche gucia non baitzeuden iarriric:
3 Eta aguer cequizquien suaren ançoco mihi partituac, eta paussa cedin hetaric bat bederarengainean.

4 Eta bethe citecen guciac Spiritu ſainduaz, eta has citecen minçatzen lengoage arrotzez, Spirituac minçatzera emaiten cerauen beçala.
5 Eta bacén Ieruſalemen egoiten ciraden Iudu Iaincoaren beldurra çuten guiçonetaric, ceruaren azpico natione orotaric.
6 Bada hots haur eguin cenean, bil cedin gendaldebat, eta trubla cedin, ceren batbederac ençuten baitzituen bere lengoage propriz hec minçatzen.
7 Eta ſpãtatuac ceuden guciac, eta mireſten çutén elkarri ciotſatela, Huná, minço diradẽ hauc gucioc, eztirade Galileano?
8 Nolatan bada guc dançuzquigu batbedera iayo içan garen lengoage propriaz *minçatzen*?
9 Parthianoéc eta Medianoéc eta Elamitéc, eta Meſopotamian egoiten diradenéc, eta Iudeã, eta Cappadocian, Ponten, eta Aſian,
10 Phrygian eta Pamphylian, Egypten, eta Lybia bazterretan, baita Cyreneco aurkán, eta Roman daudenéc, eta Iuduéc eta Proſelytoéc, Cretianoéc eta Arabianoéc:
11 Ençuten ditugu hauc gure lengoagez minço diradela Iaincoaren gauça magnificoez.
12 Eta ſpantatuac ceuden guciac, eta etzaquitén cer penſa, elkarri ciotſatela, Cer erran nahi da haur?
13 Eta bercéc truffatzen ciradela, cioiten, Mahatſarno eztiz betheac dirade *hauc*.
14 Baina çutic cegoela Pierriſec hamequequĩ, altcha ceçan bere voza, eta minça cequién, cioela, Gui-

ela, Guiçon Iuduác eta Ierusalemen habitatzen çareté guciác, haur iaquiçue, eta beharriez har itzaçue ene hitzac.
15 Ecé eztirade, çuec vste duçuen beçala hauc hordi, ikussiric ecen egunaren heren orena dela
16 Baina haur da Ioel prophetáz erran içan dena.
17* Eta içanen da azquen egunetan (dio Iaincoac) erautsiren baitut neure Spiritútic haragui guciren gainera: eta prophetizaturen dute çuen semée eta çuen alabéc, eta çuen gaztéc visioneac ikussiren dituzte, eta çuen çaharréc ametsez amets eguinen duté.

*Ioel 2.28. Esa. 44.3.*

18 Eta segur neure muthilén eta neure nescatoen gainera egun hetã erautsiré dut neure Spiritutic, eta prophetizaturen duté.
19 Eta eguinen ditut gauça miraculuzcoac ceruän garayan, eta signoac lurrean beherean, odol, eta su eta kezco vapore.
20 Iguzquia cambiaturen date ilhumbetara, eta ilharguia odoletara, Iaunaren egun handia eta notablea dathorren baino lehen.
21 Eta içanen da norc-ere inuocaturen baitu Iaunaren icena, saluaturen baita *haina*.
22 Israeltar guiçonác, ençun itzaçue hitz hauc: Iesus Nazarenoa, guiçon Iaincoaz approbatua çuec baithan obra excellentez eta miraculuz eta signoz, cein eguin baititu Iaincoac harçaz çuen artean, ceuroc-ere daquiçuen beçala:
23 Haur, Iaincoaren conseillu arrastatuz eta

prouidentiaz emana hartu cindutenean, gaichtoén eſcuz crucificaturic hil vkan duçue.

24 Cein Iaincoac reſuſcitatu baitu, herioaren doloreac lachaturic, ceré ezpaitzén poſſible hura* harçaz, eduqui ledin.

Harçaz, herioaz.

Pſal. 16. 8.

25 * Ecen Dauid-ec erraiten du harçaz, Contéplatzen nuen Iauna neure aitzinean bethiere: ecen neure eſcuineco aldean dault higui eznadin

26 Halacotz alegueratu da ene bihotza, eta boztu da ene mihia, eta are guehiago ene haraguia pauſſaturen da ſperançatan.

27 Ecen eztuc vtziren ene arimá ſepulchrean, eta eztuc permettituré hire Sainduac corruptioneric ſendi deçan.

28 Eçagut eraci drauzquidac vicitzearen bideac, betheren nauc bozcarioz eure beguitharte aitzinean.

29 Guiçon anayeác, frangoqui erran ahal deçaqueçuet Dauid patriarcház,* ecen hura hil içan dela eta ohortze içan dela, eta haren ſepulchrea gure artean dela egungo egunerano.

1. Reg. 2. 10
ber. 13. 36.

30 Bada Propheta nola baitzén, eta baitzaquian ecen* iuramenduz iuratu ceraucala Iaincoac ecen haren guerrunceco fructutic, haraguiaren arauez, Chriſt ſuſcitaturen çuela, haren throno gainean iar eraciteco.

Pſal. 132. 11.

31 Aitzinetic ikuſſiric minçatu içan da Chriſten reſurrectioneaz, ecen* eztela vtzi içan haren arimá ſepulchrean, eta haren haraguiac eztuela ikuſſi corruptioneric.

Pſal. 16. 10
berriz 13. 35.

32 Ieſus haur reſuſcitatu vkan du Iaincoac, *eta*

gauça hunez gu gucioc gara teſtimonio.
33 Bada Iaincoaren eſcuinaz altchatu içan denean eta Spiritu ſainduaren promeſſa Aitaganic recebitu dueneã, erautſi vkan du çuec orain dacuſſaçuen eta dançuçuen haur.
34 Ecen Dauid ezta igan ceruëtara: baina dio berac, *Erran drauca Iaunac ene Iaunari, Iar adi ene eſcuinean, *Pſal.110. 1*
35 Eçar ditzaquedano hire etſayac hire oinén ſcabella.
36 Segur iaquin beça bada Iſraelceo etche guciac, ecen hura Iaun eta Chriſt eguin duela Iaincoac: Ieſus çuec crucificatu duçuen haur *diot*.
37 Eta gauça hauc ẽçunic bihotz-chimico har ceçatẽ, eta errã cieçoten Pierriſi eta berce Apoſtoluey, Cer eguinen dugu guiçon anayeác?
38 Eta Pierriſec dioſte, Emenda çaitezte eta batheya bedi çuetaric batbedera Ieſus Chriſten icenean bekatuén barkamendutan: eta recebituren duçue Spiritu ſainduaren dohaina.
39 Ecen çuey *eguin çaiçue* promeſſa eta çuen haourrey, eta vrrun diraden guciey, cembat-ere deithuren baititu gure Iainco Iaunac.
40 Eta anhitz berce hitzez teſtificatzen çuen, eta exhortatzẽ cituen, cioela, Salua çaitezte natione gaichto hunetaric.
41 Bada gogotic haren hitza recebitu çutenac, batheya citecen, eta augmenta citecẽ egun hartan hirur milla arimaren inguruäz.
42 Eta perſeueratzen çuten Apoſtoluén doctrinán, eta communicationean, eta oguiaren

hauſtean,eta orationétan.

43 Eta arima guciari beldurtaſſun lot cequion, eta anhitz gauça miraculuzco eta ſigno Apoſtoluez eguiten cen.

44 Eta ſinheſten çuten guciac-ere elkarrequin ciraden,*eta gauça guciac commun cituztén.

Berr.4.32.

45 Poſſeſſioneac eta onhaſſunac ſaltzen cituzten, eta partitzen cerezten guciey batbederac beharra çuenaren araura.

46 Eta egun oroz perſeueratzen çutén gogo batez tẽplean,*eta hauſten çutela oguia etchez etche, hartzen çuten *bere* othorançá alegrançarequin eta bihotzezco ſimplicitaterequin:

Berr.20.7.

47 Laudatzen çutela Iaincoa, eta gratia çutela populu gucia baithan. Eta Iaunac eratchequiten ceraucan gende ſaluatu içatecoric egun oroz Eliçari.

## CAP. III.

*2 Mainguä ſendatu. 7 Pierriſen predicationea. 16 Fedea. 17 Iuduëc ignorantiaz faltatu. 19 Peniten tiá. 22 Moyſeſec prophetizatu Chriſtez. 26 Lehenic Iuduendaco Chriſt igorri.*

1 BAda Pierris eta Ioãnes elkarrequin igaiten ciraden templera othoitz ordutan, *baitzén* bedratzi orenetan.

2 Eta guiçon bere amarẽ ſabeleandanic maingu cẽbat ekarten cen: cein eçarten baitzutén egun oroz templeco bortha Ederra deitzen denean,

elemosyna esca lequiençát templean sartzen citadeney.
3 Harc ikus citzanean Pierris eta Ioannes templean sartzera cioacela, othoitz eguin ciecen elemosynabat luençát.
4 Baina harenganat beguiac çorrozturic Pierrisec Ioannesequin erran ceçan, Beheçac gureganat.
5 Eta hura beguira çayen çorrozqui, hetaric cerbait recebitu vstez.
6 Orduan Pierrisec erran ceçan, Cilharric ez vrrheric eztiát: baina cer baitut hura emaiten drauat: Iesus Christ Nazarenoren icenean iaiqui adi eta ebil adi.
7 Eta hura escu escuinetic harturic, goiti ceçan, eta bertan erscont citecen haren oin çolác eta aztalac.
8 Eta iauciric gueldi cedin çutic, eta baçabilã: eta sar cedin hequin templean, ebilten eta iauzten cela eta laudatzen çuela Iaincoa.
9 Eta ikus ceçan hura populu guciac çabilala, eta laudatzen çuela Iaincoa.
10 Eta eçagut ceçaten, hura ecen hura cela elemosyna *esquez* templeco bortha Ederrean iarten cena: eta bethe citecen iciapenez eta spãtamẽduz hari heldu içan çayón gauçaren gaineã.
11 Eta maingu sendatu içanac Pierris eta Ioannes çadutzala, laster eguin ceçan hetara populu guciac Salomonen deitzen den galeriara, spantaturic.
12 Hori ikussiric Pierrisec ihardets cieçón po-

puluari, Iſraeltar guiçonác, cergatic miraculuz çaudete huneçaz? edo cergatic guregana beguiac çorrozturic çaudete, gure verthutez edo ſaindutaſſunez haur ebil eraci baguindu beçala?

Berr.5.30.

13 *Abrahamen eta Iſaac-en eta Iacob-en Iaincoac, gure aitẽ Iaincoac glorificatu du Ieſus bere Semea, çuec liuratu eta vkatu duçuena Pilaten aitzinean, harc largatzeco cela iugeatu baçuen-ere.

Matth.20.27. marc 15.11 luc 23.18. ioan.18.40

14 *Baina çuec ſaindua eta iuſtoa vkatu duçue, eta requeritu duçue guicerhailebat eman lequiçuen:

15 Eta vicitzearen princea hil vkan duçue, cein Iaincoac hiletaric reſuſcitatu baitu: *eta* gauça hunez teſtimonio gara gu.

16 Eta haren icena baithango fedeaz, ikuſten eta eçagutzen duçuen haur, fortificatu vkan du haren icenac: eta harçaz *den* fedeac bere membro gucietaco diſpoſitione haur huni emã draucaçuen gución preſentián.

17 Eta orain, anayeác, badaquit ecen ignorantiaz eguin vkan duçuela, çuen Gobernadorecere beçala.

18 Baina Iaincoac aitzinetic bere Propheta gucién ahoz erran cituen gauçác, Chriſtec ſuffrituren çuela, hala complitu vkan ditu.

19 Emenda çaitezte bada, eta conuerti çaitezte, ken ditecençát çuen bekatuac.

20 Refrigeramendutaco demborác ethorri diratenean Iaunaren preſentiatic, eta igorri duqueenean çuey aitzinetic erran içan çaiçuena,

Iesus Christ:

21 Cein ceruãc eduqui behar baitu, Iaincoac, gumunduaren hatseandanic Propheta saindu gucién ahoz erran dituen gauça gucién restaurationeco demboretarano.

22 Ecen Moysesec aitey erran vkan draue, *Prophetabat suscitaturen drauçue çuen Iainco Iaunac çuen anayetaric ni beçalacoric: ençunen duçue hura minçaturen çaiqueçuen gauça gucietan.

Deut. 18. 15. ber. 7. 37.

23 Eta içanean da, nor-ere Propheta hari behaturen ezpaitzayo, deseguinen baita populuaren artetic.

24 Etare Samuelez guerozco Propheta guciéc, eta gueroz prophetizatu duten guciéc aitzinetic erran-ere badituzte egun hauc.

25 Çuec çarete Prophetén, eta Iaincoac gure aitey ordenatu drauen aliançaren seme, ciotsala Abrahami, *Eta hire hacian benedicatuac içanen dituc lurreco familia guciac.

Gen. 22. 18 gal 3. 8.

26 Çuey lehenic Iaincoac suscitaturic Iesus bere Semea igorri vkã drauçue, harc benedica cinçatençat, çuetaric batbedera çuen gaichtaquerietaric conuertituz.

CAP. IIII.

*3 Pierris eta Ioannes presoindeguian eçari. 10 Christ dela Saluadorea confessatzen eta mantenitzen dute. 11 Harri arbuyatua cein. 17 Defendatzẽ çaye predicatzea. 24 Apostoluen othoitzá. 32 Nola bere artean fideléc gauçác commun cituzten. 36 Ioses iten goiticoz deithu Barnabás.*

1 BAina hec populuari minço ça izcala, ethor cequiztén Sacrificadoreac eta templeco Capitaina, eta Sadduceuac,
2 Gaitzituric ceren iracaſtẽ baitzutén populua, eta predicatzen baitzutén Ieſuſen icenean hiletarico reſurrectionea.
3 Eta eſcuac egotz citzaten hayén gainera, eta eçar citzaten preſoindeguian biharamunerano. Ecen ia arratſa cen.
4 Eta hitza ençun çutenetaric anhitzec ſinhets ceçaten: eta guiçonén contua eguin cedin borz millatarano.
5 Eta guertha cedin biharamunean bil baitzitecen hayén Gobernadoreac eta Ancianoac eta Scribác Ieruſalemera:
6 Eta Annas Sacrificadore ſubiranoa, eta Caiphas eta Ioannes, eta Alexander, eta Sacrificadorén arraçatic ciraden guciac.
7 Eta artean eçarri cituztenean, interroga citzaten, Cer botherez edo noren icenean gauça haur eguin duçue çuec?
8 Orduan Pierriſec Spiritu ſainduaz hetheric, erran ciecen, Populuaren Gobernadoreác eta Iſraeleco Ancianoác,
9 Egungo egunẽa guiçon impotent bati eguin içan çayón vnguiaz examinatzen garenaz gueroz, cer moienez haur ſendatu içan den:
10 Iaquiçue çuec gucioc eta Iſraeleco populu guciac, ecen Ieſus Chriſt Nazarenoren icenean cein çuec crucificatu baituçue, cein Iaincoac re-

ſuſcitatu baitu hiletaric, harçaz *guiçon* haur dagoela ſendoric çuen aitzinean.

11 *Haur da harri çueçaz edificaçaleoz arbuyatu içan den hura, cein eguin içan baita cantoin buru.

12 Eta ezta bercetan batetan-ere ſaluamenduric: *ecen berce icenic ezta ceruären azpian guiçoney emã çayenic, ceinez ſaluatu behar garén.

13 Orduan ikuſſiric Pierriſen minçatzeco hardieçá eta Ioanneſena, eta eçaguturic ecen guiçon letra-gabeac eta idiotac ciradela, mireſten çutén, eta eçagutzen çutén hec Ieſuſequin içanac ciradela.

14 Eta çacuſſatenean ſendatu içan cen guiçona hequin preſent cela, ecin deuſetan contraſta ahal citaqueen.

15 Orduan hec conſeillutic campora ilkitera manaturic: compartitzẽ çutén elkarren artean,

16 Cioitela, Cer eguinẽ drauëgu guiçon hoey? ecen ſigno clarobat hauçaz eguin içan dela, manifeſt da Ieruſalemeco habitant guciey, eta ecin vka deçaquegu.

17 Baina guehiagoric publica eztadin populuaren artean, defenda diecegun mehatchuz, eztaquizquión guehiagoric minça icen horretan nehori-ere.

18 Bada hec deithuric mana citzaten neholetan-ere ezliteceen minça, eta ezleçaten iracats Ieſuſen icenean.

19 Baina Pierriſec eta Ioanneſec ihardeſten çutela erran ciecén, Eya Iaincoaren aitzinean

Pſal.118.22. eſa.28.16. mat.21.42. marc 12.10. luc 20.17. rom.9.33. 1 Pier.2.7. Matt.1.21

gauça iuſtoa denez lehen çuey obeditzea ecen ez Iaincoari, iugea eçaçue.
20 Ecen ſegur, ecin daidiquegu ençun eta ikuſſi ditugun gauçác erran eztitzagun.
21 Orduan hec mehatchurequin vtzi citzaten ioaitera, ez eridenez nolatan puni ahal litzaqueizten, populuaren cauſaz, ceren guciéc Iaincoa glorificatzen baitzutén eguin içan cenaz.
22 Ecen berroguey vrthe baino guehiago cituen guiçonac, ceiné gainean ſendatzeco ſigno haur eguin içan baitzén.
23 Eta ioaitera vtzi cituztenéã ethor citecé bere gẽdetara, eta cõta ciecén cer-ere Sacrificadore prĩcipaléc eta Ancianoéc errã baitzerauëcén.
24 Eta hec ençun cituztenean gogo batez altcha ceçaten voza Iaincoagana, eta erran ceçaten, Iauna, hi aiz ceruä eta lurra, itſaſſoa eta hetan diraden gauça guciac eguin dituán Iaincoa,
25 Dauid eure cerbitzariaren ahoz erran duana, *Cergatic mutinatu içan dirade gendeac, eta populuéc penſatu vkan dituzté gauça vanoac?

*Pſal. 2.1.*

26 Bildu içan dirade lurreco regueac, eta princeac elkarrequin bathu içan dirade Iaunaren eta haren Chriſten contra.
27 Ecen bildu içan dituc eguiaz hire ſeme ſaindu Ieſuſen contra, cein vnctatu baituc, Herodes eta Ponce Pilate Gentilequin eta Iſraeleco populuarequin.
28 Eguin leçatençát cer-ere hire eſcuac eta hire conſeilluac lehenetic eguitera determinatu baitzuen.

29 Orain bada Iauna, beha eçac hayén mehatchuetara, eta emã iecéc eure cerbitzariey libertate gucirequin hire hitzaz minça ditecen:
30 Eure eſcua hedaturic oſſaſſun emaitera, ſignoac eta miraculuac eguín ditecen Ieſus hire Seme Sainduaren icenean.
31 Eta othoitz eguin çutenean, ikara cedin lekua ceinetan bilduac baitziraden: eta bethe citecen guciac Spiritu ſainduaz, eta minçatzen ciraden Iaincoaren hitzaz hardieçarequin.
32 Eta aralde ſinhetſi vkan çutenén bihotza eta arimá cen bat: eta nehorc poſſeditzén cituen gaucetaric etzuen erraiten deus bereric çuela, baina gauça guciac cituztén commun.
33 Apoſtoluec-ere verthute handitan teſtificatzen çutén Ieſus Iaunarẽ reſurrectioneaz, eta gratia handia cen hayen gucién gainean.
34 Ecen nehorc deuſen beharric etzuen hayén artean: ceren landaric edo etcheric çuten guciéc ſaltzen baitzituztén, eta ſaldu içan ciraden gaucén precioa ekarten baitzutén:
35 Eta eçarten Apoſtoluén oinetara: eta partitzẽ çayón batbederari, beharra çuenarẽ araura.
36 Ioſeſec bada, cein icen goiticoz dei baitzedin Apoſtoluéz Barnabas (erran nahi baita conſolationezco ſemea) Leuitác, nationez Cyprianoac,
37 Poſſeſsionebat nola baitzuen ſal ceçan hura, eta ekarriric diruä eçar ceçan Apoſtoluén oinetara.

CAP. V.

*1, 7 Ananias eta Sapphira haren emaztea ſubitoqui hiltzen. 12 Anhitz miraculu. 15 Pierriſen itzala. 17 Apoſtoluac preſoinean eçarri. 19 Hec Aingueruäc idoquiric templean iracaſten ari, 25 guero conſeillura dirade eramaiten: 29 eta han Chriſt aithortzen dute. 34 Gamalielen conſeillua. 36 Theudas. 37 Iudas Galileanoa. 40 Apoſtoluac aleguera Ieſuſen icenean açotatu içanaz.*

1 BAina Ananias deitzen cen guiçon batec, Sapphira bere emaztearequin ſal ceçan poſſeſſionebat:

2 Eta apparta ceçan preciotic *partebat*, haren emazteac-ere çaquialaric: eta cembeit parte ekarriric, Apoſtoluén oinetara eçar ceçan.

3 Eta erran ceçan Pierriſec, Ananias, cergatic bethe du Satanec hire bihotza Spiritu ſainduari gueçur erraitera, eta landaren preciotic appartatzera?

4 Baldin beguiratu bahau etzena hire gueldi-tzen? eta ſalduric hire bothereau etzena? cer *cen* cergatic gauça hori gogoan eçarri behar auen? eztrauec guiçoney gueçur errã, baina Iaincoari.

5 Eta Ananias hitz hauc ençunic, eror cedin, eta renda ceçan ſpiritua: eta beldurtaſſun handia iar cedin gauça hauc ençuten cituzten gucién gainean.

6 Eta iaiquiric lagun gazte batzuc har ceçaten hura, eta camporat eramanic ohortz ceçaten.

7 Eta guertha cedin quaſi hirur orenen buruän,

haren emaztea-ere, cer eguin cen etzaquialaric, ſar baitzedin:

8 Eta erran cieçón Pierriſec, Erran ieçadan hambatetan landá ſaldu duçue? Eta harc erran ceçan, Bay, hambatetan.

9 Orduan Pierriſec diotſa, Cer *da* iunctatu içan baitzarete çuen artean Iaunaren ſpirituaré tentatzera? horrá, hire ſenharra ohortze dutenén oinac borthán, eta eramanen aute hi.

10 Eta bertan eror cedin haren oinetara eta renda ceçan ſpiritua. Eta ſarthuric lagun gaztéc eriden ceçaten hura hila, eta camporat eramanic ohortz ceçaten bere ſenharraren aldean.

11 Eta beldurtaſſun handia eguin cedin Eliça guciaren gainean, eta gauça hauc ençuten cituzten gucién gainean.

12 Eta Apoſtoluén eſcuz eguiten cen anhitz ſigno eta miraculu populuan: (eta ciradé guciac gogo batetaco Salomonen galerián.

13 Eta bercetaric batre etzén venturatzen hequin nahaſtecatzera: baina magnificatzen cituen hec populuac.

14 Eta emendatzenago cen Iaunean ſinheſten çutenen compainiá, hambat guiçonez nola emaztez)

15 Hambat non karriquetara ekarten baitzituztén eriac, eta ohetan eçarten eta lictteretan, Pierris ethor ledinean haren itzala berere hetaric cembeiten gainetic iragan ledinçát.

16 Eta biltzen cen hiri hurbiletaco communa-ere Ieruſalemera, ekarten cituztela eriac eta

ſpiritu ſatſuez tormentatuac: eta guciac ſendatzen ciraden.
17 Orduan iaiquiriç Sacrificadore ſubiranoa, eta harequin ciraden guciac (cein baita Sadduceuen ſectá) inuidiaz bethe citecen.
18 Eta egotz citzaten eſcuac Apoſtoluén gainera, eta eçar citzaten preſoindegui publicoan.
19 Baina Iaunaren Aingueruäc gauaz irequi citzan preſoindeguico borthác: eta hec campora idoquiric, erran ceçan,
20 Çoazte, eta templean çaudetela declara ietzoçue populuari vicitze hunetaco hitz guciac.
21 Eta hec *haur* ençunic ſar citecen arthatſean templean, eta iracaſten ari ciraden. Eta ethorriric Sacrificadore ſubiranoac, eta harequin *ciradenéc* bil ceçaten conſeillua eta Iſraeleco haourrén Anciano guciac: eta igor ceçaten preſoindeguira erekar litecençát.
22 Baina ethorriric officieréc etzitzaten eriden preſoindeguian, *eta* itzuliric conta ceçaten,
23 Cioitela, Preſoindeguia behinçát eridẽ dugu ertſia diligẽtia gucirequin, eta goardác campotic borthén aitzinean ceudela; baina irequi dugunean, nehor eztugu barnean eriden.
24 Hitz hauc ençun eta, Sacrificadore *ſubiranoa* eta templeco Capitaina, eta Sacrificadore principalac, dudán ceuden heçaz cer içanen cen.
25 Baina ethorriric cẽbeitec erran ciecén, Hará, preſoindeguian eçarri cintuzten guiçonac templean dirade, eta iracaſten dute populua.
26 Orduan templeco Capitainac ioanic offi-

cierequin ekar citzan bortcha gabe: (ecen populuaren beldur ciraden lapida ezlitecen)

27 Eta ekarriric hec presenta citzaté cōseilluá: eta interroga citzan Sacrificadore subiranoac,

28 Cioela, Eztrauçue gu manamēdu expressez defendatu etzineçaten iracats içen horretan? eta huná, bethe duçue Ierusaleme çuen doctrináz, eta nahi duçue gure gainera erekarri guiçon horren odola.

29 Orduan ihardesten çuela Pierrisec eta *berce* Apostoluéc erran ceçaten, Lehen obeditu behar da Iaincoa ecen ez guiçonac.

30 Gure Aitén Iaincoac resuscitatu vkan du Iesus, cein çuec çureā vrkaturic hil vkan baituçue.

31 Haur Iaincoac prince eta saluadore goratu vkan du bere escuinaz, eman lieçonçat emendamendua Israeli eta bekatuén barkamendua.

32 Eta guc ekarten draucagu testimoniage erraiten ditugun gauça hauçaz: bay eta Spiritu sainduac, ceiñ eman baitraue Iaincoac hura obeditzen duteney.

33 Eta hec *haur* ençunic despitez leher eguiteco ceuden, eta cōsultatzen çuten hayén hiltzera.

34 Orduan iaiquiric conseilluan Phariseu Gamaliel deitzen cen Legueco doctor batec, cein populu guciac ohoratzen baitzuen, mana ceçan lekorerat appurbat retira litecen Apostoluac:

35 Guero erran ciecén, Israeltar guiçonác, gogoauçue ceurotara, guiçon hauçaz cer eguinen duçuen.

36 Ecen dembora hauc baino lehen altcha ce-

din Theudas, cioela bere buruäz cerbait cela, ceini lagund baitzequión guiçon araldebat, laur ehunetarano: cein hil baitzeçaten, eta hari behatu, içan çaizcan guciac hautsi içan dirade eta ezdeus bilhatu.

37 Haren ondoan altcha cedin Iudas Galileanoa descriptioneco demboretan, eta erauz ceçan populu handi bere ondoan: gal cedin huraere, eta hari behatu içan çaizcan guciac deseguin citecen.

38 Eta orain diotsuet, parti çaquiztez guiçon horiey, eta vtzitzaçue: ecen baldin guiçonetaric bada conseillu edo obra hori, deseguinen da:

39 Baina baldin Iaincoaganic bada, ez teçaqueçue deseguin, *beguiraučue* etzaitezten Iaincoagana contrariant eriden. Eta haren opinioneco içan ciraden.

40 Orduan deithuric Apostoluac, açotatu ondoan mana citzaten ezlitecē minça Iesusen icenean, eta vtzi citzaten ioaitera.

41 Hec bada ioan citecen aleguerariC conseilluaren aitzinetic, ceren Iesusen icenean iniuria suffritzeco ohore hura eguin içan baitzayen.

42 Eta egun guciaz templean eta etchean eztziraden gueldítzen iracastetic eta Iesus Christen predicatzetic.

## CAP. VI.

*3 Diacreac ordenatzen. 4 Orationea. 5, 8 Esteben fedez bethea. 6 Othoitzá eta escuen impositionea. 7 Hitzaren auançamendua. 9 Disputatzen Estebenen contra. 10 Haren sapientiá. 11 Testimonio falsuac*

*haren*

*haren contra. 15 Haren beguithartea Ainguern batena beçalaco.*

1 ETa egun hetan nola diſcipuluac multiplicatzen baitziraden, eguin cedin Grecoén murmuratzebat Hebraicoén cõtra ceren menoſpreciatzen baitziraden cerbitzu ordinarioan hayén *emazte* alhargunac.

2 Halacotz hamabiéc diſcipuluzco compainiá deithuric, erran ceçaten, Ezta raçoin guc Iaincoarẽ hitza vtziric mahainac cerbitza ditzagun.

3 Hautaitzaçue beraz, anayeác, çuetaric çazpi guiçon teſtimoniage onetacoric, Spiritu ſainduaz eta ſapiẽtiaz betheac, eta cargu haur emanen baitrauëgu.

4 Eta guçaz den becembatean orationeari eta hitzaren adminiſtrationeari iarreiquirẽ gaitzquió.

5 Eta propos haur compainia guciaren gogaraco içan cen: eta elegi citzaten Eſteben, guiçon fedez eta Spiritu ſainduaz bethea,* eta Philippe, eta Prochoro, eta Nicanor, eta Timõ, eta Parmenas, eta Nicolas proſelyto Antiocheanoa: *Berr.21.8*

6 Hauc preſenta citzaten Apoſtoluén aitzinera, eta hec othoitze eguinic eſcuac gaineá pauſſa cietzén.

7 Eta Iaincoaren hitza aitzinaratzen cen, eta haguitz multiplicatzen cen diſcipuluén contua Ieruſalemen: Sacrificadoretaric-ere tropel handiac fedea obeditzen çuen.

8 Eta Estebenec betheric fedez eta botherez, eguiten çuen miraculu eta signo handiric populuan.

9 Eta altcha citecen batzu, Libertinén, eta Cyreneanoén eta Alexandrianoén, eta Ciliciaco eta Asiaco diradenén deitzen den synagogatic, disputatzen ciradela Estebenequin.

10 Eta ecin resisti ceçaqueoten sapientiari eta hura minça eraciten çuen Spirituari.

11 Orduan suborna citzatē guiçō batzu erraiten çutenic, Ençun dugu hori erraiten hitz blasphemiotacoric Moysesen eta Iaincoaren cōtra.

12 Eta moui citzaten populua eta Ancianoac eta Scribác: eta oldarturic harrapa ceçaten hura, eta eraman ceçaten conseillura.

13 Eta presenta citzaten testimonio falsuac erraiten çutenic, Guiçon haur ezta ichiltzen blasphemiotaco hitz erraitetic leku saindu hunen, eta Leguearen contra.

14 Ecen ençun vkan dugu haur erraiten, ecen Iesus Nazareno horrec deseguinen duela leku haur, eta muthaturen dituela Moysesec eman drauzquigun ordenançác.

15 Eta beguiac harenganat egotziric, conseilluan iarriric ceuden guciéc ikus ceçaten haren beguithartea quasi Aingueru baten beguithartea *beçalaco*.

CAP. VII.

*2 Estebenen harengá. 8 Circōcisionea. 9 Ioseph. 20 Moyses. 40 Iuduac idolatre. 43 Moloch. Rempham. 45 Dauid. 51 Estebenec Iuduac reprehen-*

*ditzen. 55 Iaincoaren gloriá ikusien: 59 Lapidatzen dela bere spiritua Iaunari gommendatzen. 60 Etsayagatic othoitz eguiten.*

1 ORduan erran ceçan Sacrificadore subiranoac, Gauça horiac horrela othe dirade?

2 Eta harc errã ceçan, Guiçon anayeác eta aitác, ençuçue, Gloriazco Iaincoa aguer cequión gure aita Abrahami Mesopotamian cenean, Charranen habita cedin baino lehen:

3 Eta erran cieçón, *Ilki adi eure herritic, eta eure ahaidetaric, eta athor *nic* eracutsirẽ drauädan lurrera. *Gene.12.1*

4 Orduan ilkiric Chaldeoén herritic habita cedin Charranen. Eta hãdic, haren aita hil cenean *Iaincoac* eraman ceçan hura çuec habitatzen çareten lur hunetara.

5 Eta etzieçón heretageric eman hartan, ez are oinaren bethea-ere: possessionetan hura emanen ceraucala promettatu baceraucan-ere, eta haren haciari haren ondoan, haourric ezpaçuen-ere.

6 Baina hunela erran ceçan Iaincoac, *Habitaturen duc hire hacia berceren lurrean: eta han hura suiectionetaco eguinen dié, eta gaizqui tractaturen laur ehun vrthez. *Gene.15.13,16.*

7 Baina *hec* cerbitzatu duqueiten gendea punituren diat nic, dio Iaincoac: eta guero ilkiren dituc, eta cerbitzaturen nié leku hunetan.

8 *Eta eman cieçón Circoncisionezco alliãçá: *Gen. 17.9.*

Gene.21.2. *eta hunela *Abrahamec* engendra ceçan Isaac, eta circoncidi ceçan hura çortzigarreneco eguGen.25.24 nean : * eta Isaac-ec *engendra ceçan* Iacob, * eta Gen.29.33 Iacob-ec hamabi Patriarchác.

eta 30.5. eta 35.23. 9 Eta Patriarchéc inuidiaz mouituric, *sal ceGen.37.28 çaten Ioseph Egypterát *eraman ledinçat* : baina Iaincoa cen harequin:

10 Eta idoqui ceçan hura bere tribulatione guGen.41.37 cietaric, *eta eman cieçón gratia eta sapientia Egypteco regue Pharaoré aitzinean, ceinec ordena baitzeçan hura Egypteco eta bere etche gucico gobernadore.

11 Eta ethor cedin gossetebat Egypteco herri gucira, eta Chanaan-era, eta herstura handia: eta etzutén erideiten iatecoric gure Aitéc.

Gen. 42.2. 12 *Baina ençun ceçanean Iacob-ec bacela ogui Egypten, igor citzan gure Aitác lehenic.

Gene.45.4. 13 *Eta bigarren aldian eçagut cedin Ioseph bere anayéz, eta declara cequion Pharaori Iosephen leinua.

14 Orduan *mãdatariac* igorriric Iosephec erekar ceçã bere aita Iacob, eta bere ahacoa gucia, baitziraden hiruroguey *eta* hamaborz persona.

Gen.46.5. Gen.49.33 15 *Iauts cedin bada Iacob Egyptera, *eta hil cedin hura, eta gure Aitác.

16 Eta eraman içan ciraden Sichemera, eta eGen.23.16 çarri içan ciraden sepulchrean, *cein erossi baitzuen Abrahamec diruren preciotan Emor Sichemeco *semearen* semetaric.

17 Baina Iaincoac Abrahami iuratu ceraucan promessaren dembora hurbiltzẽ cela, augmen-

ta cedin populua eta multiplica Egypten:

18 Berce reguebat Iosleph eçagutu etzuenic altcha cedino.

19 Harc gure nationearen contra fineciaz vsatzen çuela,gaizqui tracta citzan gure aitác,bere haourrén heriotara abandonna eraciterano, araçá falta ledinçát.

20 *Dembora hartan ſor cedin Moyſes,eta cen Iaincoaren gogaraco:cein hirur hilebethez haci içan baitzén bere aitaren etchean.

Exo.2.2. heb.11.23.

21 Guero hura abandonnatu içan cenean,eraman ceçan Pharaoren alabác,eta haz ceçan beretaco ſemetan.

22 Eta inſtruitu içan cen Moyſes Egyptecoen ſapientia gucian, eta cen botheretſu erranetan eta eguinetan.

23 Baina bethe çayonean berroguey vrtheren demborá, igan cequión bihotzera bere anayén Iſraeleco ſemén,viſitatzera ioan ledin:

24 *Eta ikuſſiric iniuria hartzen çuembat, defenda ceçan eta mẽdeca bidegabe hartzen çuena,Egyptianoa ioric.

Exo.2.11.

25 Eta vſte çuen aditzen çutela haren anayéc ecen Iaincoac haren eſcuz deliurança eman behar cerauela:baina hec etzeçaten adi.

26 *Eta biharamunean hec guducatzen ciradela,eriden cedin hayén artean,eta enſeya cedin hayén baquetzen,cioela,Guiçonác,anaye çarete çuec: cergatic batac berceari gaizqui eguiten draucaçue?

Exo.2.13.

27 Baina hurcoari gaizqui eguiten ceraucanac

bulka ceçan hura, cioela, Norc ordenatu au gure gaineco prince eta iuge?

28 Ala ni hic nahi nauc hil, atzo Egyptianoa hil auen beçala?

29 Orduan ihes eguin ceçan Moysesec hitz hunegatic, eta arrotz eguin cedin Madiango lurrean, non engendra baitzitzan bi seme.

Exod. 3. 2. 30 Eta berroguey vrthe complitu cituenean *aguer cequión Sinaco mendico desertuan Iaunaren Ainguerua, berro batetaco su-garrean.

31 Eta Moyses *hori* ikussiric miraz iar cedin visioneaz: eta consideratzera hurbiltzen cela eguin cedin harengana Iaunaren voza,

32 *Cioela*, Ni *nauc* hire aitén Iaincoa, Abrahamen Iaincoa, eta Isaac-en Iaincoa, eta Iacob-en Iaincoa. Eta Moyses ikara çabilala etzén consideratzera venturatzen.

33 Orduan erran cieçón Iaunac, Eraunzquic eure oinetaco çapatác: ecen hi aicen lekua lur saindua duc.

34 Ikussi diat, ikussi diat neure populu Egypten *denaren* afflictionea, eta hayén suspirioa ençun diat, eta iautsi içan nauc hayén idoquitera, orain *bada* athor, igorriren aut Egyptera.

35 Moyses arnegatu çutén haur, cioitela, Norc hi ordenatu au prince eta iuge? haur *bada* Iaincoac prince eta liberaçale igor çeçan, Ainguéru berroan aguertu içan çayonaren escuz.

Exo. 7, 8, 9, 10, 11, 14. 36 *Hunec campora idoqui citzan hec, miraculuac eta signoac eguinez Egypten, eta itsasso

Exod. 16. 1 gorrian, *eta desertuan, berroguey vrthez.

37 Moyſes haur da erran cerauena Iſraeleco haourrey, *Prophetabat ſuſcitaturen drauçue çuen Iainco Iaunac çuen anayetaric ni beçala-coric: hari beha çaquizquiote.

Deu.28.15 Ieben 3.22.

38 *Haur da congregationean deſertuan içan cena, Ainguerüärequin, cein mīçatzē baitzayón Sinaco mendian, eta gure Aitequin *içana*, ceinec recebitu baititu hitz viciac guri emaiteco.

Exod.19 2.

39 Ceini ezpaitzaizca behatu nahi içan gure Aitác, baina refuſatu vkan duté, eta itzuli içan dirade bere bihotzez Egypterát:

40 Ciotſatela Aaroni, *Eguin ietzaguc gure aitzinean dohazquen Iaincoac: ecen Moyſeſi, ceinec Egypteco lurretic campora eraman bai-quaitu, etzeaquiagu cer heldu içan çayón.

Exod.32.1.

41 Eta aretzebat eguin ceçaten egun hetan, eta offrenda cieçoten ſacrificio idolari: eta delecta-tzen ciraden bere eſcuezco obra eguinetan.

42 Orduan *guibelaz* itzul cequién Iaincoa, eta abandonna citzan ceruco gendarmeriaren cer-bitzatzera: Prophetén liburuän ſcribatua den beçala, *Iſraeleco etcheá, ala offrendatu drauz-quidaçue niri oblationeac eta ſacrificioac ber-roguey vrthez deſertuan?

Amos 5. 25.

43 Aitzitic hartu vkan duçue Moloch-en ta-bernaclea, eta çuen Iainco Remphamen içarra, *eta* figura hec adoratzeco eguin dituçue: hune-gatic irionen çaituztet Babylonez alde hartara.

44 Teſtimoniageco tabernaclea gure aitequin içan da deſertuan, nola ordenatu baitzuen Moy-ſeſi erran ceraucanac, *hura eguin leçan ikuſſi

Exo.25. 40 hebr.8.5.

çuen formaren ançora.

45 *Tabernacle* hura ere gure Aitéc recebituric eraman ceçaten *Iosuerequin Gentilén possessionera, cein iraitzi vkan baititu Iaincoac gure Aitén aitzinetic *Dauid-en egunetarano.

*Iosue 3.14.* *Psal.13.3.*

46 *Ceinec eriden baitzeçan gratia Iaincoaren aitzinean, *eta esca cedin eriden leçan tabernaclebat Iacob-en Iaincoarendaco.

*1.Sam.16.13.* *2.Sam.7.2* *psal.132.5.*

47 *Eta Salomonec edifica cieçón etchebat.

*1.Reg.6.1.* *1.Chro.17.12.*

48 Baina Subiranoa *ezta escuz eguin templetan habitatzen nola Prophetác erraiten baitu,

*Ber.17.24.*

49 *Ceruä da ene thronoa, eta lurra ene oinén scabellá. Cer etche edificaturen drautaçue niri? dio Iaunac: edo cein da ene repausatzeco lekua?

*Esa.66.1.*

50 Ala eztitu ene escuac eguin gauça horiac guciac?

51 *Gende garhondo gogorrác, eta bihotz eta beharri circonciditu gabeác, çuec bethi Spiritu sainduari contrastatzen çaizquiote, çuen aitác beçala, çuec-ere.

*Hier.6.10. eta 9.26. ezech.44.9*

52 Prophetetaric cein eztute persecutatu çuen aitéc? hil-ere badituzte Iustoaren aduenimendua aitzinetic erran dutenac, ceinen tradiçale eta erhaile orain çuec içan baitzarete.

53 *Ceinéc recebitu baituçue Leguea Aingueruén ministerioz, eta ezpaituçue beguiratu.

*Exo.19.3.*

54 Eta gauça hauén ençutean, leher eguiten çuten bere bihotzetan eta hortz garrascotsez ceuden haren contra.

55 Baina nola baitzén Spiritu sainduaz bethea, cerurát beguiac altchaturic ikus ceçan Iaincoa-

ren gloria, eta Iesus Iaincoaré escuineá cegoela.
56 Eta dio, Huná, ikusté ditut ceruäc irequiac, eta guiçonaren Semea Iaincoaren escuinean dagoela.
57 Orduan hec oihu handiz iarriric bere beharriac boça citzaten, eta gogo batez oldar citecen haren contra.
58 Eta hiritic campora iraitziric lapidatzé çuté: eta testimonioec eçar citzaté bere abillamẽduac Saul deitzẽ cẽ guiçon gazte batẽ oinetara.
59 Eta lapidatzen çutén Esteben, inuocatzen eta erraiten çuela, Iesus Iauná, recebi eçac ene spiritua.
60 Eta belhaurico iarriric oihu eguin ceçan ocengui Iauna, eztieceala imputa bekatu haur, Eta haur erran çuenean lokar cedin.

## CAP. VIII.

*1 Saulec Eliça persecutatzen. 5 Philippec Samaritanoey predicatzen. 9 Simon Magicianoa batheyatzẽ 14 Pierris eta Ioãnes Samariara igorten. 15 Othoitzá, Spiritu saindua. 16 Samaritanoac. 26 eta Eunuchoa batheyatu. 39 Philippe Spirituaz harrapatu.*

1 * ETa Saul consent cen haren hil tzean. Eta eguin cedin dembora hartan persecutione hãdi Ierusalemen *cen* Eliçaren contra: eta guciac barreya citecen Iudeaco eta Samariaco comarquetarát, salbu Apostoluac.

*Berriz. 22 20.*

2 Eta eraman ceçaten Esteben *oborztera* Iaincoaren beldurra çuten guiçon batzuc, eta nigar handi eguin ceçaten haren gainean.

Berriz.22.4 3 *Eta Saulec deseguiten çuen Eliçá, etchez etche sartzen cela: eta tiratuz bortchaz guiçonac eta emazteac presoindeguian eçarten cituen.

4 Bada barreyatu içan ciradenac baçabiltzan hara huna, *Iaincoaren* hitza denũciatzẽ çutela.

5 Eta Philippec iautsiric Samariaco hiri batetara, predica ciecén Christ.

6 Eta populua gogo batez behatzẽ çayõ Philippec erraiten çuenari, ençuten eta ikusten cituztela eguiten cituen signoac.

7 Ecen spiritu satsuác, *beçaz* eduquiten ciradenetaric anhitzetaric ilkiten ciraden, ocengui oihuz ceudela: eta anhitz paralytico eta maingu senda cedin.

8 Eta alegrança handi eguin cedin hiri hartan.

9 Eta Simon deitzen cen guiçõbat cen, lehendanic hirian encantamẽduz vsatzen çuenic, eta Samariaco populua encantatu çuenic, cioelabere buruäz cembeit personage handi cela.

10 Ceini behatzen baitzaizquión chipienetic hãdieneranoco guciac, cioitela, Haur da Iaincoaren verthute handi hura.

11 Eta hari beha çaizcã ceren dembora lucez encãtamenduz adimendutaric erauci baitzituẽ.

12 Baina Philippe sinhetsi çutenean, ceinec denuntiatzen baitzituen Iaincoaren resumari eta Iesus Christen icenari appertenitzen çaizcan gauçác, batheyatzen ciraden bay guiçonac bay

emazteac.

13 Eta Simonec berac-ere sinhets ceçã, eta batheyatuz gueroztic Philipperẽ aldetic etzén higuitzen: eta eguiten ciraden signoac eta verthuteac ikusten cituenean, spantatzen cen.

14 Eta ençun çutenean Ierusalemen ciraden Apostoluéc, nola Samariac recebitu çuen Iaincoaren hitza, igor citzaten hetara Pierris eta Ioannes.

15 Hauc *hara* iautsi içan ciradenean othoitz eguin ceçaten hecgatic, recebi leçatençát Spiritu saindua.

16 (Ecẽ oraino hetaric batetara-ere etzén iautsi içan, baina solament batheyatuac ciraden Iesus Iaunaren icenean)

17 Guero paussa citzaten escuac hayén gainean, eta recebi ceçaten Spiritu saindua.

18 Orduan ikussiric Simonec ecen Apostoluẽ escuen paussatzez emaiten cela Spiritu saindua, diru presenta ciecén.

19 Erraitẽ çuela, Indaçue niri-ere bothere hori, nori-ere escuac gainean paussaturen baitrautzat, recebi deçan Spiritu saindua.

20 Baina Pierrisec erran cieçón, Hire diruä hirequin gal dadila, ceren estimatu baituc Iaincoaren dohaina dirutan conquestatzen dela.

21 Eztuc hic parteric ez heretageric eguiteco hunetan: ecen hire bihotzá eztuc chuchen Iaincoaren aitzinean.

22 Emendadi bada eure malitia horretaric, eta Iaincoari othoitz eguióc, eya, aguian barka

lequidianez eure bihotzeco penſamendua.

23 Ecen behaçun gucizco karminean, eta iniquitatezco eſtecailluan aicela badiacuſſát.

24 Orduan ihardeſten çuela Simonec errã ceçan, Othoitz eguioçue çuec enegatic Iaunari, erran dituçuen gaucetaric batre guertha eztaquidançát,

25 Hec bada teſtificaturic eta denuntiaturic Iaunaren hitza, itzul citecen Ieruſalemera, eta anhitz Samaritanoén burgutan Euangelioa pre dica ceçaten.

26 Guero Iaunarẽ Ainguerua minça cequión Philipperi, cioela, Iaiqui adi, eta habil Egu-erdi alderát, Ieruſalemetic Gazara iauſten den bidera: hura duc deſert:

27 Eta iaiquiric ioan cedin, eta huná, guiçon Ethiopiano Eunuchobat, Ethiopianoén reguina Candaceren azpian manamendu gucia çuenic, cein baitzén haren onhaſſun guciaren gaineco: eta ethorri içan cen adoratzera Ieruſalemera:

28 Eta itzultzen cen iarriric cegoela bere carriot gaineã, eta iracurtzẽ çuen Eſaias prophetá.

29 Orduan erran cieçón Spirituac Philipperi, Hurbil adi, eta hers aquio carriot horri.

30 Eta Philippec laſter eguinic ençun ceçan hura, iracurtzen çuela Eſaias prophetá : eta errã cieçón, Baina aditzen duc iracurtzen duana?

31 Eta harc dio, Eta nola ahal neçaque, baldin norbeitec guida ezpaneça? Eta othoitz eguin cieçon Philipperi iganic iar ledin harequin.

32 Eta Scripturaco paſſage iracurtzen çuena,

haur cen, * Ardibat beçala heriotzera eraman Esa.53.7.
içan da: eta nola bildots-bat motzen duenaren aitzinean mutu *baita*, hala eztu irequi vkan bere ahoa

33 Haren beheratzeã haren iugemendua goratu içan da: baina haren irautea norc contaturen du? ecen altchatzen da lurretic haren vicia.

34 Eta ihardeftẽ ceraucala Eunuchoac Philipperi, erran ceçan, Othoitz eguiten drauat, norçaz Prophetác erraiten du haur? bere buruäz, ala cembeit bercez?

35 Orduan irequiric Philippec bere ahoa eta haſſiric Scriptura hunetaric denuntia cieçõ Ieſus.

36 Eta bidean ioaiten ciradela, ethor citecẽ vr batetara: orduã dio Eunuchoac, Huna vra: cerc empatchatzen nau batheyatu içatetic?

37 Eta erran ceçã Philippec, Baldin ſinheften baduc *eure* bihotz guciaz, ahal aite. Eta ihardeſten çuela *harc* erran ceçan, Sinheſten diat Iaincoaren Semea dela Ieſus Chriſt.

38 Eta mana ceçan carriota gueldin ledin: eta iauts citecẽ biac vrera, Philippe eta Eunuchoa: eta batheya ceçan hura.

39 Eta igan ciradenean vretic, Iaunaren Spirituac harrapa ceçan Philippe, eta guehiagoric etzeçan ikus hura Eunuchoac: eta bere bideaz ioaiten cen aleguerarik.

40 Baina Philippe eriden cedin Azot-en: eta iragaitean predica ceçan Euangelioa hiri gucietan Ceſareara hel leiteno.

CAP. IX.

*1 Saul Christgana conuertitzen. 10 Ananias 11 Saulec othoitze eguiten, 18 eta batheyaturic, 20 Christ predicatzen. 23 Iuduec conseillu eduquiten Saulen contra. 27 Murraillán behera hura iausten. 26 Ierusalemera ethorten. 27 Apostoluetara eramaiten: 30 Guero Cesareara. 31 Eliçac baquez. Iaincoaren beldurra. 32 Lideaco sainduac. 33 Paralyticoa sendatu. 39 Thabita resuscitatu. 43 Pierris larru appainçale batenean egon.*

*Rom.9.3. gal.1.13.*

1 * ETa Saul enflambaturic oraíno mehatchuz eta hiltzecaz Iaunaren discipuluén contra, ethor cedin Sacrificadore subiranoagana.

2 Eta letra esca cequión Damascera synagoguetara *ioaiteco:* baldin nehor erideiten balu secta hunetacoric, guiçonac eta emazteac estecaturic eraman litzançat Ierusalemera.

*Ber.22.6. 1.Cor.15.8 2.cor.12.2.*

3 * Eta ioaiten cela, guertha cedin hurbil baitzedin Damascera: *eta subitoqui haren inguruän argui cedin chistmist baten ançora cerutic.

4 Eta lurrera eroriric ençun ceçan vozbat ciotsala, Saul, Saul cergatic ni persecutatzen nauc?

5 Eta erran ceçan, Nor aiz Iauna? Eta Iaunac erran ceçan, Ni nauc Iesus hic persecutatzen duana: gogor duc hiretaco akuloén contra osticó eguitea.

6 Eta *harc* ikaraturic eta icituric erran ceçan, Iauna, cer nahi duc daguidan? Orduan Iaunac hari, Iaiqui adi eta sar adi hirian, eta erranen çaic cer eguin behar duán.

7 Eta harequin ioaiten ciraden guiçonac, gueldi citecen icituric, *haren* voza bay ençuten, baina nehor ikusten etzutela.

8 Eta iaiqui cedin Saul lurretic, eta bere beguiac irequiric nehor etzuen ikusten: eta escutic guidatzẽ çutela, eraman ceçatẽ Damascera.

9 Non egon baitzedin hirur egun ikusten etzuela: eta etzeçan ian ez edan.

10 Eta cen Damascen Ananias deitzẽ cen discipulubat, eta erran cieçon hari Iaunac visionez, Ananias. Eta dio harc, Huná ni, Iauna.

11 Orduan Iaunac hari *erran cieçon*, Iaiquiric oha Çucena deitzen den karricara, eta bilha eçac Iudaren etcheã Saul deitzen den Tharsianobat: ecen hará, othoitzetan diagoc.

12 (Eta ikus ceçan visionez Ananias deitzen cen guiçon-bat sartzen cela eta haren gainean escua eçarten çuela, ikustea recebi leçançat)

13 Eta ihardets ceçan Ananiasec, Iauna, ençun diat anhitzetaric guiçon hunez, cembat gaitz eguin drauen hire sainduey Ierusalemen.

14 Etare hemen badic authoritate Sacrificadore principaletaric, hire icena inuocatzen duten gucién estecatzeco.

15 Eta errã cieçon Iaunac, Habil: ecẽ ene vnci electionezcobat duc hura ekar deçançát ene icena Gentilẽ, eta reguén, eta Israeleco haourrén aitzinera.

16 Ecen nic eracutsirẽ diarocat cembat behar duen ene icenagatic suffritu.

17 Ioan cedin bada Ananias eta sar cedin et-

che hartan:eta eſcuac haren gaineã eçarriric,erran ceçan, Saul anayé, Iaunac igorri niauc (*ceini baita* Ieſus hiri ethorten aincen bidean aguertu çayana) ikuſtea recebi deçãçat, eta Spiritu ſaindu az bethe adinçat.

18 Eta bertan eror citecen haren beguietaric quaſi ezcatác beçalacoac,eta ikuſtea recebi ceçan bertan: guero iaiquiric batheya cedin.

19 Eta ian çuenean indar har ceçan. Eta egon cedin Saul Damaſcẽ ciradẽ diſcipuluequin cembeit egun.

20 Eta bertã ſynagoguetã predica ceçã Chriſt ecen hura cela Iaincoaren Semea.

21 Eta icitzen ciraden hura ençuten çutén guciac, eta erraiten çutén, Ezta haur deſeguin dituena Ieruſalemen icen haur inuocatzen çutenac,eta hartara huna ethorri baita, hec eſtecaturic eraman litzançat Sacrificadore principaletara?

22 Baina Saul gueroago fortificatzenago cen, eta confunditzen cituen Damaſcen habitatzen ciraden Iuduac, confirmatuz ecen haur cela Chriſt.

23 Eta dembora luceren buruän eduqui ceçaten Iuduéc elkarren artean conſeillu haren hiltzeco,

24 Baina Saulen eçagutzera ethor citecẽ hayẽ celatác:*eta beguiratzẽ cituzten borthác egun eta gau, hura hil leçatençát.

2.Cor.11. 32.

25 Baina harturic hura diſcipuluec gauaz murraillatic erauts ceçatẽ cordaz ſaſquian eçarriric.

26 Eta

26 Eta Saul ethorri ceneã Ieruſalemera, diſcipu luequin lagundu nahiz çabilã: baina guciac harẽ beldur ciraden, ez ſinhetſiz hura diſcipulu cela.
27 Baina Barnabaſec harturic hura eraman ceçan Apoſtoluetarà, eta conta ciecén nola bideã ikuſſi çuen Iauna, eta hari minçatu içan çayón, eta nola Damaſcen frangoqui minçatu içan cẽ Ieſuſen icenean.
28 Eta cen hequin ioaiten eta ethorten cela Ieruſalemen.
29 Eta frãgoqui Ieſus Iaunaren iceneã minçatzen eta diſputatzẽ cen Grecoén contra: baina hec hura hil nahiz çabiltzan.
30 Hori eçaguturic anayéc eramã ceçaten hura Ceſareara, eta igor ceçaten Tarſera.
31 Elicéc bada Iudea guciã eta Galilean eta Samarian baque çutén, eta edificatzen ciraden, Iaincoaren beldurréan ebiliz, eta Spiritu ſainduaren conſolationez multiplicatzen ciraden.
32 Guertha cedin, Pierris gucietarat iragaiten cela, ethor baitzedin Lyddan habitatzen ciraden ſainduetara-ere.
33 Eta eriden ceçan han Eneás deitzen cen guicõ-bat ia çortzi vrthez ohean cetzanic, cein baitzén paralytico:
34 Eta diotſa Pierriſec, Eneás, ſendatzen au Ieſus Chriſtec: iaiqui adi, eta *eure ohea* accotra eçac eurorren. Eta bertan iaiqui cedin.
35 Eta ikus ceçaten hura Lyddan eta Saronan habitatzen ciraden guciéc, eta conuerti citecen Iaunagana.

36 Ioppen-ere bacén diſcipuluſſa Tabitha deitzen cēbat, erran nahi baita Dorcas: haur cē bethea obra onez eta elemoſyna eguitē cituenéz.
37 Eta guertha cedin egun hetan erituric hil baitzedin: eta ikuci çutenean, eçar ceçatē gambera gora batetan.
38 Eta ceren Lydda baitzen Iopperen aldean, diſcipuluec ençunic ecen Pierris han cela, igor citzaten bi guiçon harengana, othoizten çutela ez leçan berant hetarano ethortera.
39 Eta iaiquiric Pierris ethor cedin hequin: eta arribatu cenean, eraman ceçaten gambera gorara: eta preſenta cequizquión *emazte* alhargun guciac nigarrez ceudela, eta eracuſten cerautzatela Dorcaſec hequin cenean eguiten cituen arropác, eta veztidurác.
40 Baina guciac campora idoquiric Pierriſec *eta* belhaurico iarriric othoitz eguin ceçan, eta itzuliric gorputzerát, erran ceçā, Tabitha iaiqui adi, eta harc irequi citzan bere beguiac, eta Pierris ikuſſiric iarri cedin.
41 Orduan *Pierriſec* eſcua hari emanic eraiqui ceçā: guero deithuric ſainduac eta *emazte* alhargunac preſenta ciecén hura viciric.
42 Eta haur eçagut cedin Ioppe gucian eta ſinhets ceçaten anhitzec Iauna baithan.
43 Eta guertha cedin, egō baitzedin anhitz egun Ioppen Simon *deitzen cen* larru appainçale batenean.

CAP. X.

*1 Cornelio Centenerari Aingueruäz manatzen çayo*

*Pierris erekar deçan.* 10 *Visione Pierrisec ikusten.* 23 *guero Corneliogana ioanic.* 34 *Christ han predicatzen.* 43 *Barkamendua fedez.* 44 *Spiritu saindua Gentilén gainera iausten.* 48 *Eta hec dirade batheyatzen.*

1 ETa guiçó-bat cen Cesarean, Cornelio deitzen cenic, Italiano deitzen cen bandaco cétener,
2 Deuota, eta Iaincoaren beldurra çuena bere etche guciarequin, eta elemosyna anhitz eguiten ceraucana populuari, eta Iaincoari othoitz eguité ceraucana ordinarioqui.
3 Harc ikus ceçan visionez claroqui egunaren bedratzi orenén inguruán, Iaincoaré Aingueru-bat harégana ethorté cela, eta ciotsala, Cornelio
4 Eta harc beguiac harenganat chuchéduric e-ta icituric erran ceçan, Cer da Iauna? Eta erran cieçón, Hire orationeac eta elemosynác igan di tuc memoriotan Iaincoaren aitzinera.
5 Orain bada igor itzac batzu Ioppera, eta erekar eçac Simó icé goiticoz Pierris deitzé dena.
6 Hura duc ostatuz Simó larru appainçalebat baithan, ceinec baitu etchea itsas aldean: harc erranen drauc cer hic eguin behar duán.
7 Eta partitu cenean Corneliori minço çayón Aingueruä, dei citzan bere cerbitzarietaric biga, eta harequin ardura ciradenetaric hommedarmes deuotbat.
8 Eta hæy gucia contatu cerauenean, igor citzan Ioppera.
9 Biharamuneá hec bidean cioacela, eta hirirá

hurbiltzen ciradela,igan cedin Pierris etche gai nera othoitz eguitera ſey orenén inguruän.
10 Eta guertha cedin,goſſetu cenean,refectionea hartu nahi vkan baitzuen, eta appaincen ce raucatela eror cedin haren gainera ſpirituzco tranſportamendubat.
11 Eta ikus ceçan ceruä irequia,eta iauſten çayola beregana vncibat,mihiſſe hãdibat beçala, laur cantoinetan lothua,lurrera iauſten cela.
12 Ceinetan baitzén lurreco *animal* laur oindũ gucietaric,eta baſſa beſtietaric eta herreſtez dabiltzanetaric, eta ceruco chorietaric.
13 Eta ethor cedin harengana vozbat, Iaiqui adi Pierris, hil eçac eta ian eçac.
14 Orduan dio Pierriſec,Ez Iauna: ecen egundano eztiát ian gauça communic edo ſatſuric.
15 Eta vozac berriz hari bigarren aldiã *erran cieçon*, Iaincoac purificatu duena hic ezteçála communetan eduqui.
16 Eta haur eguin cedin hirur aldiz: guero harçara retira cedin vncia cerurát.
17 Eta Pierriſec bere baithan dudatzen çuen beçala ceric licén ikuſſi çuen viſionea, huná, Cornelioz igorri içan ciradẽ guiçonac,Simonẽ etchea galde eguinic ethor citecen borthara.
18 Eta *cembeit* deithuric, galde eguin ceçaten eya Simon icen goiticoz Pierris deitzen cena han cenez oſtatuz,
19 Eta Pierris gogueta cegoela viſioneaz,errã cieçón Spirituac, Huná, hirur guiçon hire galdez diaudec.

20 Iaiquiric bada iautſi adi eta habil hequĩ deus dudatu gabe: ecen nic igorri citiát.

21 Pierriſec bada iautſiric Cornelioz harengana igorri içan ciraden guiçonetara, erran ceçan, Huná, ni naiz *çuec* galdez çaudetena: cer da cauſá ceinagatic hemen baitzarete?

22 Eta hec erran ceçaten, Cornelio centenera, guiçon iuſtoa eta Iaincoaren beldurra duena, eta Iudúen natione guciaz teſtimoniage duena, diuinoqui Aingueru ſaindu batez aduertitu içã duc erekar ençan hi bere etchera, eta minçatzẽ ençun ençan.

23 Barnera deithuric bada recebi citzan hec oſtatuz eta biharamunean Pierris ioan cedin hequin, eta Ioppeco anayetaric batzuc compainia eguin cieçoten.

24 Eta biharamunean ſar citecen Ceſarean. Eta Cornelio hayén beguira cegoẽ, bere ahideac eta adiſquide familiarac deithuric.

25 Eta guertha cedin Piérris ſartzen cen beçala, Cornelio aitzinera ilki baitzequión, eta bere buruä haren oinetara egotziric, adora ceçan.

26 Baina Pierriſec goiti ceçan hura, cioela, Iaiqui adi neuror-ere guiçon nauc.

27 Eta harequin minço cela ſar cedin, eta eriden ceçan anhitz *gende* hara bilduric:

28 Eta erran ciecén, Çuec badaquiçue * eztela permettitzen guiçon Iudubat iuncta edo hurbil daquión eſtranger bati: baina niri eracutſi draut Iaincoac guiçonic batre commũ edo ſatſu ezteçadan erran. *Ioan. 4,9.*

29 Eta halacotz duda gabe ethorri içan naiz deithuric. Galdez nauçue bada cer causaz ni erekarri nauçuen.

30 Orduan Cornelioc dio, Laur egun dic ordu hunetarano bainincē barur, eta bedratzi orenetan niangoán, othoizte eguiten neure etchean: eta huná, guiçōbat presenta ciedián ene aitzinean, arguitzen çuen veztiduratan:

31 Eta erran cieçán, Cornelio, ençun içan duc hire orationea, eta hire elemosynác memoriotan dituc Iaincoaren aitzinean.

32 Igorrac bada Ioppera, eta dei eraci eçac Simon icen goiticoz Pierris deitzē dena: hura duc ostatuz Simō larru appainçalearen etchean itsas aldean: hura dathorrenean minçaturen çaic hiri

33 Halacotz bertā hiregana igorri diat, eta hic vngui eguin duc ceren ethorri aicén. Orain bada gu gucioc gaituc hemen Iaincoaren aitzineā Iaincoaz manatu içan çaizquián gauça guciac ençun ditzaguncát.

34 Orduan irequiric Pierrisec bere ahoa, erran ceçan, Eguiaz erideiten dut ecen* Iaincoa eztagoela personén apparentiara beha.

35 Baina natione gucietā hari beldur çayona, eta iustitia eguiten duena, dela haren gogaraco.

36 Gauça haur igorri vkan draue *Iaincoac* Israeleco haourrey, denuntiatzen çuelaric baquea Iesus Christez, cein baita gucién Iauna.

37 Çuec badaquiçue cer eguin içan den Iudea gucian, * hassiric Galilean, Ioannesec predicatu vkan duen Baptismoaren ondoan:

*Deu.10.17 2 chro.19.7 iob 34 19 sap.6.8. eccl.35.16 rom.2.11. gal.2.6 eph.6.9. coloss.3.25. 1.Pier.1.17*

*Luc 4.14*

38 Nola Iesus Nazareno vnctatu duē Iaincoac Spiritu sainduaz eta verthutez, ceĩ ebili içã baita vngui eguitē çuela eta deabruaz tormētatu cira dē guciac sendatzē cituela: ecē Iaĩcoa cēharequĩ

39 Eta gu gara testimonio Iuduén eta Ierusalemeren comarcán eguin dituen gauça guciéz.

40 Cein hil vkan baitute çurean vrkaturic, *eta* hura Iaincoac resuscitatu vkan du hereneco egunean, eta eman manifestatu içateco,

41 Ez populu guciari, baina lehendanic Iaincoaz ordenatu ciraden testimonioey, guri *diot* ceinéc ian eta edan baitugu harequin hura hiletaric resuscitatu içan den ondoan.

42 Eta manatu gaitu predicatzera populuari eta testificatzera ecē hura dela vicién eta hilén iuge içateco Iaincoaz ordenatua.

43 *Huni Propheta guciec-ere testimoniage ekarten draucate, *ecen haren iceneau bekatuén barkamendua recebituren dutela hura baithan sinhetsiren duten guciéc.

*Hiere.3.34 mich.7.18. Berriz.15.9*

44 Oraino Pierrisec propos hauc eduquiten cituela, iauts cedin Spiritu saindua hitz haur ençuten çuten gucién gainera.

45 Eta mirets ceçaten Circoncisioneco fidel Pierrisequin ethorriéc, cerenGentilén gainera-ere Spiritu sainduarē dohaina erautsi içã baitzē.

46 Ecen ençuten cituztē hec lengoagez minçatzen eta Iaincoaren laudatzen.

47 Orduã ihardets ceçan Pierrisec, Ala nehorc vra empatcha ahal deçaque batheya eztitecen guc beçala spiritu saindua recebitu duten hauc?

48 Eta mana ceçan batheya litecen Iaunaren icenean. Orduan othoitz eguin cieçoten cembeit egunetacotz egon ledin.

CAP. XI.

*1 Ceren Christ Gentiley predicatu derauen Circoncisionecoec Pierris reprotchatzen. 18 Penitentiá Gẽtiley eman. 20 Antiochecoey Christ denuntiatzen. 25 Barnabasec Saul hetara eramaiten. 26 Lehen Christino icena Antiochen. 27 Propheta batzu Antiochera ethorri. 28 Agabusec gossetea denuntiatzen. 29 Iudeaco fidelac paubre.*

1 ENçun ceçaten bada Apostoluéc eta Iudeã ciraden anayéc ecen Gentilec-ere recebitu çutela Iaincoaren hitza.

2 Eta igan cenean Pierris Ierusalemera ihardu qui ceçaten haren contra circõcisionecoéc,

3 Cioitela, Circonciditu eztiraden guiçonetara sarthu içan aiz, eta hequin ian vkan duc.

4 Orduan hassiric Pierrisec declara cietzẽ *gauça guciac* bata bercearen ondoan, cioela,

5 Ni nincén Ioppeco ciuitatean othoitz eguiten nengoela: eta adimenduz transportaturic ikus neçan visionebat, *baitzen*, iausten cen vncibat mihisse handibat beçalacoric, laur cantoinetan *lothua*, beheititzen, cela cerutic, eta ethor cedin eneganano.

6 Hartara beguiac eçarriric gogoa eta ikus neçan lurreco *animal* laur oindunetaric, eta bassa bestietaric, eta herrestez dabiltzanetaric, eta ceruco chorietaric:

7 Eta ençun neçan vozbat niri erraiten cerautala, Iaiqui adi Pierris, hil eçac eta ian eçac.
8 Eta erran neçan, Ez Iauna: ecen gauça cõmunic edo satsuric eztuc egũdano sarthu ene ahoã.
9 Eta ihardets cieçadan vozac berriz cerutic, Iaincoac purificatu duena, hic ezteçála satsu.
10 Eta haur eguin cedin hiruretan: eta harçara retira citecen gauça hauc guciac cerurát.
11 Guero huná, moment berean hirur guiçon presenta citecen ni nincen etchera, Cesareatic enegana igorriac.
12 Eta erran cieçadan Spirituac hequin ioan nendin, dudaric eguin gabe. Eta ethor citecen enequin sey anaye hauc-ere, eta sar guentecen guiçonaren etchean:
13 Eta conta cieçagun nola ikussi çuen Ainguerubat bere etchean, presentatzen çayola eta ciotsala, Igorrac cembaterebeit gende Ioppera, eta erekarrac Simon icen goiticoz Pierris deitzen dena.
14 Harc erranen drauzquic hitzac, ceinéz saluaturen baitaiz, eta hi eta hire etche gucia.
15 Eta minçatzen has nendinean, iauts cedin Spiritu saindua hayén gainera, * hatsean gure gainera-ere *iautsi cen* beçala.

*Lehen 2.4 berriz 13.6.*

16 Orduan orhoit nendin Iaunaren erranaz, nola cioen, *Ioannesec batheyatu vkan du vrez baina çuec batheyaturẽ çarete Spiritu sainduaz.

*Mat.3.11. marc 1 8. luc.3.16 ioan 1.26 lehen 1.5. berriz 19.4*

17 Bada guri bay dohain bera Iaincoac eman drauenaz gueroz, guc Iesus Christ Iauna baithã sinhetsi vkan baitugu: ni nor nincén empatcha

neçan Iaincoa?

18 Orduan gauça hauc ençunic amatiga citecen, eta glorifica ceçaten Iaincoa, erraiten çutela, Beraz Gentiley-ere Iaincoac eman draue emendamendua vicitze vkaiteco.

Leben 8. 1. 19 *Bada Estebenen causaz ethorri içan cen tribulationeagatic barreyatu ciradenac-ere ioã citecen Phenicerano eta Cyprerano eta Antiocherano, nehori declaratzen etzeraucatelaric *Iaincoaren* hitza, Iuduey berey baicen.

20 Baina hetaric batzu ciraden Cypriano, eta Cyreniano, cein Antiochen sarthuric Grecoey minço baitzaizten denuntiatzen çutela Iesus Iauna.

21 Eta Iaunaren escua cen hequin: eta gende aralde handibat sinhetsiric conuerti cedin Iaunagana.

22 Eta hel cedin famá Ierusalemen cen Eliçaren beharrietara: eta igor ceçatẽ Barnabas ioan ledin Antiocherano:

23 Eta arriuatu cenean, eta ikussi çueneã Iaincoaren gratiá aleguera cedin, eta exhortatzen çituẽ guciac, bihotzeco fermutassun batez perseueratzera Iaunarequin.

24 Ecen guiçon ona cen eta Spiritu sainduaz eta fedez bethea: eta gendetze handia augmenta cequion Iaunari.

25 Guero ioan cedin Barnabas Tarsera, Saulen bilha:

26 Eta hura eridenic eraman ceçan Antiochera: eta guertha cedin vrthe gucian Eliçarequin

conuerſa baitzeçaten, eta populu handi iracats baitzeçaten, eta diſcipuluac lehenic Antiochen Chriſtino dei baitzitecen.

27 Eta egun hetan iauts citecen Ieruſalemetic Propheta *batzu* Antiochera.

28 Eta hetaric Agabus deitzen cen batec iaiquiric declara ceçan Spirituaz, goſſete handia içanen cela mundu orotan: eta haur hala guertha cedin Claudio Ceſaren demborán.

29 Eta diſcipuluetaric batbederac bere ahalaren arauez, delibera ceçaten aiutatan *cerbaiten* igortera Iudean habitatzen ciraden anayey.

30 Eta hala eguin ceçaten, Ancianoey igorriz Barnabaſen eta Saulen eſcuz.

## CAP. XII.

*2 Iacques ezpataz hil. 3 Pierris preſoindeguian eçarri: 7 Aingueruäc hura idoqui. 12 Ioannes Marc. 13 Rhode. 15 Pierriſen Aingueruä. 23 Herodes harabartu. 24 Iaunaren hitza auãçatzen. 25 Barnabas eta Paul Ieruſalemera itzuli.*

1 ETa dembora berean iar cedin regue Herodes Eliçaco batzuén affligitzẽ

2 Eta hil ceçan Iacques Ioãneſen anayea, ezpataz.

3 Eta ikuſiric *hori* laket çayela Iuduey, auãça cedin Pierriſen-ere hatzamaitera: (eta ciraden altchagarri gaberico oguién egunac)

4 Eta hatzamanic eçar ceçan preſoindeguian,

eta eman ciecén laur laurnazco gendarmesi beguiratzera: bazco ondoan hura populuari presentatu nahiz.
5 Pierris bada beguiratzen çutén presoindeguian: baina Eliçác harengatic ardura Iaincoari othoitz eguiten ceraucan.
6 Eta Herodesec hura presentatzeco çuenean, gau hartan lo cetzan Pierris bi gendarmesen artean, bi cadenaz estecatua, eta goardéc borthaitzinean beguiratzen çutén presoindeguia.
7 Eta huná, Iaunaren Ainguerubat ethor cedin, eta arguibatec argui ceçan presoindeguian, eta ioric Pierrisen seihetsa, iratzar ceçan, cioela, Iaiqui adi fitetz, eta eror cequizquión cadenác escuetaric.
8 Eta erran cieçón Ainguerüac, Guerricadi, eta iaunz itzac eure sandaleac. Eta eguin ceçan hala. Guero erran cieçón, Har eçac eure arropá, eta arreit niri.
9 Eta ilkiric *Pierris* iarreiqui cequión, eta etzaquian eguia cenez Ainguerüaz eguiten cena: baina vste çuen cembeit visione ikusten çuela.
10 Eta iraganic lehen goardia eta bigarrena, ethor citecen burdinazco borthara, ciuitatera daramanera, cein bere buruz irequi baitzequién, eta ilkiric iragan ceçaten karricabat, eta bertan parti cedin Ainguerüa harenganic.
11 Orduan Pierrisec accordaturic erran ceçan, Orain daquit eguiazqui ecen Iaunac igorri vkan duela bere Ainguerüa, eta idoqui nauela Herodesen escutic, eta Iuduén populuaren vstecari

gucitaric.

12 Eta *gauçá* consideraturic ethor cedin Maria Ioannesen, icen goiticoz Marc deitzen cenaren amaren etchera, non baitziraden anhitz bilduac eta othoitze eguiten ceudela.

13 Eta bulkatu çuenean Pierrisec etche aitzineco borthá, ilki cedin nescatobat behatzera, Rhode deitzen cenic.

14 Eta eçaguturic Pierrisen voza, bozcarioz etzeçan irequi etche aitzineco borthá, baina barnera laster eguinic declara ciecén, Pierris borthaitzinean cegoela.

15 Eta hec erran cieçoten, Erhoa aiz. Baina harc seguratzen çuen hala cela: eta hec cioiten, Haren Aingueruä dun.

16 Baina Pierrisec bulkatzez perseueratzẽ çuẽ: eta irequiric, ikus ceçatẽ hura, eta spãta citecen.

17 Eta hæy keinu eguinic escuaz ichil litecen, conta ciecén nola Iaunac idoqui çuen presoindeguitic: eta erran ciecén, Cõta ietzeçue gauça hauc Iacquesi eta anayey. Eta ilkiric ioan cedin berce leku batetara.

18 Baina arguitu cenean gudu handia cen gendarmesén artean eya Pierris cer eguin cen.

19 Eta Herodesec hura galdeguinic eriden etzuenean, goardez informatione eguinic, mana ceçan punitzera eraman litecen: eta iautsiric Iudeatic Cesareara, *han* egon cedin.

20 Eta Herodesec çuen guerla eguiteco gogo Tyrianoén eta Sidonianoén contra: baina hec gogo batez ethor citecen harengana, eta iraba-

ciric Blasto, cein baitzén regueren gamberaco guehién, baque esquez ceuden: ceren hayén comarcá reguerenetic entretenitzen baitzen.

21 Eta egun assignatu batez, Herodesec regue arropaz veztituric, iudicioco iar lekuan iarriric, harengabat eguin ciecén.

22 Eta populua oihuz iar cedin, Iaincoaren voza, eta ez guiçonarena!

23 Eta bertan io ceçan hura Iaincoaren Aingueruäc, ceren ezpaitzeraucan Iaincoari gloria eman: eta harabarturic hil cedin.

24 Baina Iaincoaren hitza auançatzen cen eta multiplicatzen.

Berriz 11. 29.

25 Barnabas-ere eta Saul *itzul citecen Ierusalemetic, carguä complituric, berequin harturic Ioannes-ere icen goiticoz Marc deitzen cena.

## CAP. XIII.

*1 Antiocheco Eliçán Propheta eta doctor batzu. 2 Barnabas eta Saul predicatzera separatzen. 3 Barur eta othoizte eguin. 5 Salamis. 6 Bariesu propheta falsu. 12 Sergioc Christ baithan sinhesten. 14 Paulec Antiochen predicatzen. 45 Iuduac hari contrastatzen. 48 Gentilec sinhesten. 50 Persecutione Paulen eta Barnabasen contra. 51 Iconiora hec retiratzen. 52 Disciupuluac bozcarioz bethe.*

Berriz 14. 26.

1* ETa ciraden, Antiochen cen Eliçán Propheta eta doctor batzu, Barnabas, eta Simõ Niger deitzen cena, eta Lucio Cyreneanoa, eta Manahen, Herodes tetrarcharequin haci içan cena, eta Saul.

2 Hec bada Iauna miniſterioan cerbitzatzen çutela eta barur ciradela, erran ceçan Spiritu ſainduac, Separa ietzadaçue Barnabas eta Saul deithu ditudan obracotzat.

3 Orduan barur eta othoizte eguinic, eta eſcuac hayén gainean eçarriric, igor citzaten.

4 Hec bada igorriric Spiritu ſainduaz, iauts citecen Seleuciara: eta handic embarca citecen Cyprera.

5 Eta ethorri ciradenean Salaminara denuntia ceçaten Iaincoaren hitza Iuduén ſynagoguetan: eta baçutén Ioannes-ere lagun.

6 Guero Iſlá Paphorano trebeſſatu çutenean, eriden ceçaten Iudu propheta falſu encantaçalebat, Bariesu deitzen cenic,

7 Cein baitzén Sergio Paul proconſularequin, guiçon çuhurrarequin. Hunec deithuric Barnabas eta Saul, Iaincoaren hitzaren ençuteco deſira çuen.

8 Baina reſiſtitzen cerauen Elymas encantaçaleac, (ecen hala erran nahi du harẽ icenac) Proconſula fedetic erauci nahiz.

9 Baina Saulec (Paul-ere *deitzen* denac) betheric Spiritu ſainduaz, harengana beguiac chuchenduric,

10 Erran ceçan, O enganio eta finecia guciaz betheá, deabruaren ſemeá, iuſtitia guciaren etſayá, ez aiz Iaunaren bide chuchenén makurtzetic gueldituren?

11 Orain bada huná, Iaunaren eſcua hire gainean, eta içanen aiz itſu, ikuſtẽ eztuala iguzquia

dembora batetarano, Eta bertan eror cedin haren gainera lanho eta ilhumbe: eta inguru çabilan norc eſcutic guida leçaqueen bilha.

12 Orduan Procõſulac ikuſſiric cer eguin içan cen, ſinhets ceçan, miraz iarriric Iaunaren doctrináz.

13 Eta Paphotic partitu ciradenean Paul eta harequin ciradenac, ethor citecẽ Pergera Pamphiliaco *hirira*: *orduan Ioannes hetaric partituric, itzul cedin Ieruſalemera.

Berriz 15. 38

14 Eta hec Pergetic partituric ethor citecen Antioche Piſidiacora, eta ſarthuric ſynagogán Sabbath egunean, iar citecen.

15 Orduan Leguearen eta Prophetén iracurtzearen ondoan, igor ceçaten ſynagogaco principaléc hetara, cioitela, Guiçon anayeác, baldin çuetan bada cembeit hitz populuaren exhortationetacoric, erraçue.

16 Iaiquiric bada Paulec, eta eſcuaz ichil litecen keinu eguinic, dio, Iſraeltar guiçonác, eta Iaincoaren beldurra duçuenác, ençuçue:

17 Iſraeleco populu hunen Iaincoac elegitu vkan ditu gure aitác, eta populu haur goratu vkã du, *Egypteco lurrean ceudenean, *eta beſſo gora batez idoqui citzan hec hartaric.

Exod.1.1.
Exo.13.14

18 *Eta berroguey vrtheren demboraren inguruän hayén conditioneac ſuffritu vkan ditu deſertuan.

Exod.16.2.

19 Guero deſeguenic çazpi natione Chanaango lurrean, *çorthez parti ciecén hayén lurra.

Ioſue 14.1.

20 Eta guero guti gora, guti behera laur ehun

*eta* berroguey *eta* hamar vrthez *emañ cietzén iugeac Samuel prophetaganano. *Iug. 3.9*

21 Guero *efca citecen regue baten, *eta emañ ciecén Iaincoac Saul Cis-en femea, Ben-iamin leinuco guiçona, berroguey vrthez. *1 Sam. 8.5* *1Sam. 9.15 eta 10.1.*

22 Eta hura kenduric, *eman ciecén Dauid reguetan: hari-ere teftimoniage emanic, erran ceçan, *Eriden dut Dauid Ieſſeren *ſemea*, neure gogaraco guiçona, ceinec eguinen baititu ene nahi guciac. *1.Sam. 16. 13.* *Pſal. 89.21*

23 Hunen hacitic Iaincoac *bere** promeſſaren araura ſuſcitatu vkan drauca Iſraeli Saluadorea, *baita*, Ieſus: *Eſa. 11.1.*

24 *Aitzinetic Ioanneſec emendamendutaco Baptiſmoa Iſraeli predicatu vkan ceraucanean haren ethorteracoan. *Malach. 3.1 mat. 3.1. eta 11.10. marc. 1.2. luc 3.27*

25 Eta acabatzen çuenean Ioanneſec bere curſua, errã ceçan, *Nor naicela vſte duçue? ez naiz *hura* ni, baina huná, ethorten da ene ondoan, ceinen oinetaco çapatá ezpainaiz digne lacha deçadan. *Mat. 3.11. marc 1.7. ioan 1.20.*

26 Guiçon anayeác, Abrahamen arraçaco ſemeác, eta çuen artean Iaincoaren beldurra dutenác, çuey ſaluamendu hunetaco hitza igorri içan çaiçue.

27 Ecen Ieruſalemeco habitantéc eta hayén gobernadoréc hura eçagutzen etzutelaric condẽnaturic, Prophetén hitz Sabbath guciaz iracurtzen diradenac complitu vkan dituzté. *Matth. 27. 22.*

28 Eta eceinere heriotaco cauſaric *hartan* eridẽ gabe *Pilate requeritu vkan duté hura hil leçan. *marc 15.13 luc 23.22 ioan 19.16.*

29 Eta complitu cituztenean harçaz scribatu ciraden gauça guciac, çuretic kenduric, eçar ceçaten monument batetan.

Matt.28.6 marc 16.6. luc 24.6.

30 * Baina Iaincoac resuscitatu vkan du hura hiletaric.

Ioan 20.19

31 *Eta ikussi içan da anhitz egunez, harequin batean Galilearic Ierusalemera igan içan ciradenéz, eta dirade harẽ testimonio populua baithara.

32 Guc-ere denuntiatzen drauçuegu çuey *gure* Aitéy eguin içan çayen promessaz den becembatean:

33 Ecen hura Iaincoac complitu drauela hayen haourrey, *cein baicara* gu, Iesus resuscitaturic, bigarren Psalmuan-ere scribatua den beçala, *Ene Semea aiz hi, nic egun engendratu aut hi.

Psal. 2.7. hebr. 1.5. eta 5.5.

34 Eta *eracusteco* resuscitatu duela hura hiletaric guehiagoric sepulchrera ez itzultzecotan, hunela erran vkan du, *Emanen drauzquiçuet çuey Dauid-en saindutassun segurac.

Esa. 55.3

35 Eta halacotz bercé leku batetan-ere erraiten du, *Eztuc permettiturẽ hire Sainduac corruptioneric ikus deçan.

Psal. 16.10 leben 2.31.

36 Ecen segur Dauid bere demborán Iaincoaren conseillua cerbitzaturic, *lokartu içan da, eta bere aitequin eçarri içan da, eta ikussi vkan du corruptione.

1. Reg. 2.10 leben 2.29.

37 Baina Iaincoac resuscitatu duenac eztu ikussi vkan corruptioneric.

38 Iaquiçue bada guiçon anayeác, ecen huneçaz bekatuén barkamẽdua declaratzẽ çaiçuela:

39 Eta Moysesen Legueaz iustificatu ecin içan çareten gauça gucietaric, huneçaz, sinhesten duen gucia iustificatzen dela.

40 Gogoauçue bada Prophetetan erran içan dena guertha eztaquiçuen:

41 *Ikussaçue menospreçatzaleác, eta mirets eçaçue, eta vrt çaitezte, ecen obrabat eguiten dut nic çuen egunetan, obrabat *diot* cein ezpaituçue sinhetsirẽ baldin nehorc cõta badieçaçue.

Habac. 2.5

42 Guero ilki ciradenean Iuduén synagogatic, othoi citzaten Gentilée hurreneco Sabbathoan hitz hauc hæy declara lietzén.

43 Eta congregationea barreyatu cenean, iarreiqui cequién Iuduetaric eta Iaincoa cerbitzatzen çutẽ proselytoetaric anhitz Pauli eta Barnabasi: eta hauc hæy minçatzen çaiztela, Iaincoaren gratian perseueratzera exhortatzen cituztén.

44 Eta hurrenẽgo Sabbath *egunean* quasi hiri gucia bil cedin Iaincoaren hitzaren ençutera.

45 Baina Iuduac populua ikussiric inuidiaz bethe citecen, eta cõtrastatzen çaizten Paulec erraiten cituen gaucey, contrastatzen ciradela eta blasphematzen çutela.

46 Orduan constantqui Paulec eta Barnabasec erran ceçaten, Çuey behar çaiçuen lehenic denuntiatu Iaincoaren hitza: baina hura arbuyatzen duçuenaz gueroz, eta vicitze eternalaren *vkaiteco* indigne çuen buruäc iugeatzẽ dituçuenaz *gueroz*, huná, itzultzen gara Gentiletarát.

47 Ecen hala manatzen draucu Iaunac, dioela,

Esa.49.6. *Ordenatu aut hi Gentilén argui içateco, saluamendu aicençat lurraren bazterrerano.

48 Eta Gentilac *haur* çançutenean aleguera citecen, eta glorifica ceçaten Iaunaren hitza: eta sinhets ceçaten vicitze eternalecotzat ordenatu ciraden guciéc.

49 Eta auançatzen cen Iaincoaren hitza comarca hartan gucian.

50 Eta Iuduéc incita citzaten emazte deuot eta honest batzu, eta hirico principalac, eta eraguin ceçaten persecutione Paulen eta Barnabasen contra, eta egotz citzaten bere comarquetaric campora.

Berr.18.6. mat.10.14 marc 6.11. luc 9.5.

51 *Baina hec berén oinetaco errhautsa inharrossiric hayén contra, ethor citecen Iconiora.

52 Eta discipuluac bethatzen ciraden bozcarioz eta Spiritu sainduaz.

## CAP. XIIII.

1 *Iconion anhitz conuertitu.* 3 *Signo eta miraculu.* 4 *Iconiocoac bi aldetara partitzen.* 5 *Persecutione.* 6 *Paulec eta Barnabasec Lystrara ihes eguiten.* 8 *Mainguä sendatu.* 12 *Lystracoec Barnabasi Iupiter eritzi, eta Pauli Mercurio.* 13 *Eta haei sacrificatu nahi.* 19 *Paul lapidatu.* 23 *Ancianoac Elicetan ordenatzen.* 27 *Fedearen borthá irequi Gentiley.*

1 ETa guertha cedin Iconion elkarrequin sar baitzitecen Iuduén synagogara, eta minça baitzitecen hala non sinhets baitzeçan Iuduetaric eta Grecoetaric mulço handiac.

2 Baina ſinheſteric etzuten Iuduéc incita eta corrumpi citzaten Gentilén bihotzac anayén contra.

3 Bada dembora lucez *han* egon citecen conſtantqui minçatzen ciradela, Iaunaren gorthaſſunez, ceinec teſtimoniage ekarten baitzaraucan bere gratiazco hitzari, eta emaiten çuen ſigno eta miraculu eguin ledin hayén eſcuz.

4 Eta parti cedin hirico gendea *bi aldetara*, eta batac ciraden Iuduequin, eta berceac Apoſtoluequin.

5 Baina altchatu ciradenean Gentilac eta Iuduac bere Gobernadorequin hayén iniuriatzera eta lapidatzera:

6 Adituric gauçá, ihes eguín ceçaten Lycaoniaco hirietara, *hala nola*, Lyſtrara eta Derbera, eta inguruco comarquetara:

7 Eta han predicatzen çutén Euangelioa.

8 Eta Lyſtraco guiçon oinez impotentbat cegoen iarriric bere amáren ſabeleandanic maingu, egundano ebili etzembat:

9 Hunec ençun ceçan Paul minçatzen, ceinec, hari begui eratchequiric, eta ikuſsiric ecen fede baçuela ſendatu içateco, errã baitzieçõ ocẽgui,

10 Iaiqui adi eure oinén gainera çutic. Orduan *hura* iauz cedin eta ebil cedin.

11 Eta gẽdetzéc ikuſsiric Paulec eguin çuena, altcha ceçaten bere voza, Lycaonico lẽgoagez, erraiten çutela, Iaincoac guiçonac beçalacaturic iautſi dirade guregana!

12 Eta Barnabas deitzẽ çutén Iupiter: eta Paul,

Mercurio:ceren harc hitza ekarten baitzuen.

*cein, Iupiter.*

13 Eta Iupiter-en ſacrificadoreac(*cein baitzén hayén hiri aitzinean) cecen coroatuac borthaitzinerano ekarriric, nahi çuen populuarequin ſacrificatu.

14 Baina hori ençunic Apoſtoluac, Barnabas eta Paul, bere arropác çathituric oldar citecen populuaren artera,oihuz ceudela.

15 Eta erraiten çutela,Guiçonác,cergatic gauça horiac eguitẽ dituçue?çuec çareten affectione beren ſuiectioneco guiçonac gara, declaratzen drauçuegula, horrelaco gauça vanoetaric conuerti çaitezten Iainco viciagana, *ceruä eta lurra eta itſaſſoa, eta hetan diraden gauça guciac eguin dituenagana:

*Gene.1.1. pſal.146.6. apoc.14.7.*

*Pſal.81.13.*

16 Ceinec iragan demboretan *Gentil guciac berén bidetan ebiltera vtzi vkan baititu.

17 Badaric-ere bere buruä eztu teſtimoniage gabe vtzi, *guri* vngui eguinez,emaitẽ drauzquigula cerutic vriac eta ſaſoin abratſac, eta bethatzen dituela viãdaz eta alegrãçaz gure bihotzac.

18 Eta gauça hauc erraiten cituztela, nequez amatiga citzaten gendetzeac ſacrifica ezliecén.

19 Orduan ethor citecen Antiochetic eta Iconiotic Iudu batzu, hec populua irabaciric eta *Paul lapidaturic, herreſta ceçaten hiritic campora,vſtez hila cen.

*2.Cor.11. 25.*

20 Baina diſcipuluac haren ingurura bildu ciradenean,iaiquiric ſar cedin hirian: eta biharamunean ioan cedin Derbera Barnabaſequin.

21 Eta hiri hartan euangelizatu çutenean, eta

anhitz iracatsiric itzul citecen Lystrara eta Iconiora eta Antiochera:

22 Cōfirmatzen cituztela discipuluén gogoac, eta exhortatzen cituztela fedean perseueratzera, eta *erraiten çutela*, anhitz tribulationez Iaincoaren resumán sarthu behar garela.

23 Eta compainiaren abisuz Elicetaric batbederatan Ancianoac ordenatu ondoan, barurequin othoitz eguinic, gommēda cietzoten heç Iaunari, cein baithan sinhetsi vkan baitzutén.

24 Guero Pisidia iraganic, ethor citecē Phamphyliara.

25 Eta Pergen *Iaincoaren* hitza denuntiaturic, iauts citecen Attaliara.

26 *Eta handic embarca citecen Antiochera, nondic gommendatu içan baitziraden Iaincoaren gratiari, complitu çuten obracotzat. *Lehen 13.2*

27 Eta ethorri içan ciradenean eta bildu çutenean Eliçá, cōta citzaten Iaincoac heçaz eguin cituen gauça guciac, eta nola irequi cerauen *Iaincoac* Gentiley fedearen borthá.

28 Eta egon citecen han dembora lucez discipuluequin.

## CAP. XV.

*1 Anaye falsuéc Circōcisionea iracasten. 7, 13 Pierrisen eta Iacquesen harengá. 8, 9 Gentiléc Spiritu saindua recebitu. 10 Leguearen vztarria. 12 Gratia. 22 Gende igorri Apostoluéc Antiochera. 23 Concilioco letrác. 36 Paulen eta Barnabasen artean contentione Ioannes Marc-en causaz.*

1 ETa Iudeatic iautſi içan ciraden batzuc, iracaſten cituztén anayeac, *cioitela*, *Baldin circõcidi ezpaçaiteztez Moyſeſen maneraren araura, ecin ſalua çaitezquete.

Gal.5.1.

2 Eta gudu eta diſputa handi Pauli eta Barnabaſi helduric hayén contra, ordena ceçaten igan litecen Paul eta Barnabas eta cembeit berceric Apoſtoluetara eta Ancianoetara Ieruſalemera queſtione hunegatic.

3 Hec bada igorriric Eliçáz, iragan citzaten Pheniça eta Samaria, Gentilén conuerſionea cõtatzen çutela: eta eman ciecén bozcario handi anaye guciey.

4 Guero Ieruſalemera arriuaturic, recebitu içan ciraden Eliçáz eta Apoſtoluéz eta Ancianoéz, eta conta citzaten Iaincoac heçaz eguin vkan cituen gauça guciac.

5 Baina (*cioiten*) altchatu içan dirade Phariſeuén ſectaco ſinhetſi çuten batzu, cioitela, ecen circonciditu behar çutela, eta manatu Moyſeſen Leguearen beguiratzera.

6 Orduan bil citecen Apoſtoluac eta Ancianoac eguiteco hunez conſideratzera.

7 Eta diſputa handiren ondoan, Pierriſec iaiquiric erran ciecén, *Guiçon anayeác, çuec badaquiçue ecen haraitzinadanic Iaincoac gure artean elegitu vkan *nauela*, ene ahoz ençun leçaten Gentiléc Euangelioco hitza, eta ſinhets leçaten.

Lehẽ 10.43 eta 11.13.

8 Eta Iaincoac eçagutzen baititu bihotzac, testificatu draue, hæy Spiritu saindua emanez guriere beçala.

9 * Eta eztu differentiaric batre eguin gure eta hayén arteã, fedez purificaturic hayén bihotzac

Lehẽ 10.43
1.cor.1.2.

10 Orain bada cergatic tentatzen duçue Iaincoa, discipuluén leppo gainean * vztarriarẽ eçartera, cein ez gure aitéc ez guc ecin ekarri vkan baitugu?

Mat.23.4.

11 Baina Iesus Christ Iaunaren gratiaz sinhesten dugu saluaturen garela, hec-ere beçala.

12 Orduan ichil cedin compainia gucia, eta beha çaizten Barnabasi eta Pauli, ceinéc contatzẽ baitzutẽ cer signo eta miraculu eguin çuẽ Iaincoac heçaz Gentilén artean.

13 Eta ichildu ciradenean, ihardets ceçan Iacquesec, cioela, Guiçon anayeác, ençun neçaçue ni,

14 Simonec declaratu vkã du nola lehenic Iaincoac visitatu dituen Gentilac hetaric populubat bere iceneco har leçançat.

15 Eta hunequin accordatzen dirade Prophetén hitzac: scribatua den beçala.

16 * Guero itzuliren naiz, eta berriz edificaturen dut Dauid-en tabernacle eroria, eta haren ruinác berriz edificaturen ditut, eta berriz altchaturen dut hura.

Amos 9.11

17 Requeri deçatençát goitico guiçonéc Iauna, eta Gentil guciéc, ceinén gainean inuocatu içan baita ene icena: dio gauça hauc guciac eguin dituen Iaunac.

18 Bethidanic Iaincoac badaçaguzqui bere obra guciac.

19 Harren nic dut eſtimatzẽ eztituela nehorc faſchatzeco Gentiletaric Iaincoagana conuertitzen diradenac:

20 Baina ſcribatzeco çayela beguira ditecen idolén ſatſutaſſunetaric, eta paillardiçataric, eta *gauça* ithotic, eta odoletic.

21 Ecen Moyſeſec haraitzinadanic baditu hirietaric batbederatã hura predicatzen dutenac, ſynagoguetan Sabbath guciaz iracurtzẽ denaz gueroz.

22 Orduan nahi vkã dute Apoſtoluéc eta Ancianoéc Eliça guciarequin, beren artetic guiçon elegituac igor litecen Antiochera Paulequin eta Barnabaſequin, *hala nola*, Iuda icen goiticoz Barſabas deitzen cena, eta Silas, guiçon principalac anayén artean.

23 Hayén eſcuz ſcribatzen çutela ſeguitzẽ dena, Apoſtoluéc eta Ancianoéc eta anayéc Antiochen eta Syrian eta Cilician Gentiletaric *diradẽ* anayey, ſalutatione.

24 Ceren aditu baitugu ecen gutaric ilki diraden batzuc, cembeit propoſez trublatu vkan çaituztela, çuen arimác erauciz eta circoncidi çaitezten eta Leguea beguira deçaçuen manatuz, ceiney ezpaiquendrauen carguric eman:

25 Gure irudia içan da conſentimendu batez bildu garenona, elegitu 'ditugun guiçonén çuetara igortera, Barnabas eta Paul gure maitequin,

26 *Baitirade* IesusChrist gure Iaunagatic bere viciac abandonnatu dituztén guiçonac,
27 Igorri ditugu bada Iuda eta Silas, hec-ere gauça berac ahoz contaturen drauzquiçue.
28 Ecen on iruditu çayó Spiritu sainduari eta guri, ez eçartera carga handiagoric batre çuen gainera gauça necessario hauc baicen:
29 *Baitirade*, Beguira çaitezten idoley sacrificatu diraden gaucetaric, eta odoletic, eta *ithotic, eta paillardiçataric, baldin gauça hautaric çuen buruäc beguira baditzaçue, vngui eguinẽ duçue. Vngui duçuela.

*Ez vrean ithotic, baina leppoan herstuz, edo bercela leher eguinetic.*

30 Hec bada congit harturic ethor citecẽ Antiochera: eta compainiá bilduric eman citzaten letrác.
31 Eta iracurri cituztenean consolationearen gainean aleguera citecen.
32 Halaber Iudac eta Silasec, nola hec-ere Propheta baitziraden, anhitz hitzez exhorta citzaten anayeac eta confirma.
33 Eta *han* cerbait dembora eguin çutenean, igorri ican ciraden anayéz baquerequin Apostoluetarát,
34 Guciagatic-ere Silasi on irudi cequion han egoitera.
35 Eta Paul eta Barnabas-ere egon citecẽ Antiochen, iracastẽ eta euangelizatzen çutela anhitz bercerequin-ere, Iaunaren hitza.
36 Eta cẽbeit egunen buruän errã cieçón Paulec Barnabasi, Itzuliric visita ditzagun gure anayeac Iaunaren hitza denuntiatu dugun hiri gu-

cietan, *eya* nola dauden.

37 Eta Barnabasec conseillatzē çuē berequin har leçaten Ioannes, Marc deitzen cena:

38 Baina Pauli etzayón bidezco iruditzen hetaric ia Pamphiliatic bereci cena, eta obra hartara lagundu etzituena berequin har leçaten.

39 Hala ihardiqui ceçaten bada, non bata berceaganic separa baitzitecen: eta Barnabas Marc harturic embarca baitzedin Cyprerát.

40 Baina Paul Silas elegituric parti cedin, anayéz Iaincoaren gratiari gommendaturic.

41 Eta iragan citzan Syria eta Cilicia, confirmatzen cituela Eliçác.

## CAP. XVI.

*3 Timotheo circonciditu. 6 Asian predicatzea defendatu. 9 Visione Pauli aguertu Macedoniacoez. 14 Emaztey Euangelioa predicatzē. 18 Pythonen spiritua çuen nescatoa sendatu. 23 Paul eta Silas açotaturic presoinean eçarri. 26 Lurra ikaratu presoinean. 30 Geolerac bere familia guciarequin sinhetsi. 37 Paulec bere buruä Romano eguiten.*

1 GVero arriua cedin Derbera eta Lystrara: eta huná, discipulubat cén han *Timotheo deitzen cenic, emazte fidel baten seme, baina, aita Grecbaten.

*Rom. 16. 21. phil. 2. 19. 1. thes. 3. 2.*

2 Huni testimoniage on ekarten ceraucaten Lystran eta Iconion ciraden anayéc.

3 Haur nahi ykan du Paulec harequin ioan le-

din, eta harturic circoncidi ceçã hura leku hetã ciraden Iuduacgatic: ecen baçaquiten guciéc haren aita nola Grec cen.
4 Eta hirietan iragaiten ciradela iracaſten cituzten *hetangoac* Ieruſalemen ciraden Apoſtoluéz eta Ancianoéz eguin içan ciraden ordenãcén beguiratzen.
5 Bada Eliçác fedean confirmatzen ciraden, eta contua egun guciaz emendatzen cen.
6 Guero iraganic Phrygia eta Galatiaco comarcá, debetatu içan ciraden Spiritu ſainduaz hitzaren Aſian predicatzetic:
7 Ethorri cideneanMyſiara, enſeyatzen ciraden Bithiniara ioaiten: baina etziecén permetti Spirituac.
8 Baina Myſia iraganic iauts citecen Troaſera.
9 Eta viſionebat gauaz aguer cequión Pauli, *baitzen hunela,* Macedoniaco guiçon-bat preſenta cedin haren aitzinean othoitz eguiten ceraucala eta erraiten, Iragan adi Macedoniarat eta aiuta gaitzac.
10 Eta viſionea ikuſſi vkan çuenean, bertã enſeya guentecen Macedoniara ioaiten, ſeguratzẽ guenela ecen Iaunac deithu guentuela hæy euangelizatzera.
11 Partituric bada Troaſtic, chuchen ethor guentecen Samothracera, eta biharamunean Neapoliſera.
12 Eta handic Philippoſera, cein baita Macedonia quoartereco lehen hiria, *eta da** colonia. Eta

*Berceetaric ethorri habitantac.*

égon guentecen hiri hartan cembatrebeit eguri
13 Eta Sabbath egunean ilki guẽtecen hiritic campora fluuio bazterrerá, non içaten ohi baitzén othoitzá: eta iarriric minça guẽquinztén hara bildu içan ciraden emaztey.
14 Eta Lydia deitzẽ cen Thiatira hirico emazte eſcarlata ſaltzale Iaincoa çerbitzatzen çuen batec ençun guençan: ceinen bihotza Iaunac irequi baitzeçan, Paulez erraiten ciraden gaucén gogoatzeco:
15 Eta batheyatu içan cenean *bera* eta haren familiá, othoitz ceguigun, cioela, Baldin eſtimatu baduçue Iaunagana fidel naicela, ſarthuric ene etchean, çaudete. Eta bortcha guençan.
16 Eta guertha cedin gu othoitzara guendoacela, neſcato Pythonen ſpiritua çuẽbat aitzinera ethor baitzequigun: ceinec irabaci hãdia emaiten baitzerauen bere nabuſſiey, aſmatzez.
17 Haur Pauli eta guri iarreiquiric, oihuz cegoen, cioela, Guiçon hauc Iainco ſubiranoaren cerbitzari dirade, ceinéc ſaluamenduco bidea denuntiatzen baitraucute.
18 Eta haur eguin ceçã ãhitz egunez: baina gaitziruric Paulec, eta itzuliric errã cieçõ ſpirituari, Manatzẽ aut Ieſus Chriſten icenarẽ partez horrenganic ilki adin. Eta ilki cedin ordu berean.
19 Orduan haren nabuſſiéc çacuſſatenean ecẽ hayén irabaci ſperançá galdu cela, hatzamanic Paul eta Silas, eraman citzaten merkatuco plaçara Magiſtratuetara.
20 Eta hec preſentaturic Gobernadorey, erran

ceçaten,Gende hauc trublatzen duté gure hiria Iudu diradelaric:
21 Eta denuntiatzen dituzté recebi ez beguira ditzagun ſori eztiraden ordenançác,ikuſſiric e-cen Romano garela.
22 Eta oldar cedin communa hayén contra: e-ta Gobernadorée hayén arropác çathituric ma-na ceçaten,açota litecen.
23 Eta anhitz çauri eguin cerauecenean eçar citzaten preſoindeguian, manamendu eguinic geolerari,ſegurqui hec beguira litzan:
24 Ceinec halaco manamendua harturic eçar baitzitzan preſoindegui çolán, eta hayén oinác hers citzan cepoaz.
25 Eta gauarē erdiã Paulec eta Silaſec othoiz-ten eta laudatzen çuten Iaincoa:eta ençuten ci-tuzten eſtecaturic ceudenéc.
26 Eta ſubitoqui lur ikaratze handibat eguin cedin,hala nõ iharros baitzitecen preſoindegui fundamentac : eta bertan irequi citecen bortha guciac,eta gucién eſtecailluac lacha citecen.
27 Orduan iratzarturic geolerac çacuſquianeã preſoindegui borthác irequiac, ezpatá idoqui-ric bere buruä hil nahi çuen,vſtez preſonerec i-hes eguin çutén:
28 Baina Paulec oihu eguin ceçan ocengui,ci-oela,Eztaguioala deus minic eure buruäri:ecen guciac hemen gaituc.
29 Orduan hura argui galdeguinic oldar cedin barnera,eta ikara çabilala egotz ceçan bere bu-ruä Paulen eta Silaſen *oinetara*.

30 Eta hec campora idoquiric dio, Iaunác, cer eguin behar dut ſaluatu içateco?

31 Eta hec erran cieçoten, Sinhets eçac Ieſus Chriſt Iauna baithan eta ſaluaturen aiz hi eta hire etchea.

32 Eta minça cequizquión Iaincoaren hitzaz hari, eta haren etchean ciraden guciey.

33 Eta *harc* hec harturic gauaren ordu hartan berean ikuz cietzén çauriac: eta batheya cedin hura eta harenac guciac bertan.

34 Eta bere etchera eramanic, mahaina eçar ciecén: eta aleguera cedin, ceren bere etche guciarequin ſinhetſi vkan baitzuen Iaincoa baithan.

35 Eta eguna ethorri içan cenean Gobernadorec igor citzaten ſargeantac, erran leçaten, Eyec congit guiçon horiey.

36 Orduan geolerac conta cietzon hitz hauc Pauli, *cioela*, Igorri dié Gobernadorec *erraitera*, congit eman daquiçuen: orain beraz ilkiric çoazte baquerequin.

37 Baina Paulec erran ciecén, Publicoqui açotatu gaituzten ondoan, iugemendu formaric gabe, Romano garelaric, egotzi vkan gaituzte preſoindeguira: eta orain ichilic campora egoizten gaituzte? ez balimba: baina berec ethorriric idoqui gaitzate.

38 Eta repporta cietzén ſergeantec Gobernadorey hitz hauc: eta beldur citecen, ençunic ecē Romano ciradela.

39 Eta ethorriric othoitz citzaten, eta idoquiric ſup-

ric ſupplica cequiztén ilki litecen hiritic.

40 Orduan ilkiric preſoindeguitic ſar citecen Lydia baithan: eta ikuſſiric anayeac, conſola citzaten hec, eta parti citecen.

CAP. XVII.

*1 Paulec Theſſaloniceanoey Chriſt predicatzen. 4 Hetaric batzuc ſinheſten. 5 Iuduac Paulen eta Silaſen contra: 6,7 Baina Iaſonec hec recebitzen, eta heçaz fiadore iarten. 10 Preſonerac largatu. 13 Iuduéc Paul perſecutatzen. 15 Paul Atheneſerat ioaiten: 17 eta han Chriſt predicatzen. 23 Iainco eçagun gabearen aldarea. 24 Iaincoaren adoratzeco manerá. 30 Penitentiá. 31 Iugemendua. 34 Dionyſioc eta Damariſec ſinheſten.*

1 GVero iraganic Amphipolian eta Apollonian, ethor citecen Theſſalonicara, non baitzen Iuduén ſynagogabat.

2 Eta coſtumatu çuen beçala Paul ſar cedin hetara, eta hirur Sabbathoz diſputa cedin hequin Scripturetaric.

3 Declaratzen eta propoſatzen ceraúela, ecen behar içan dela Chriſtec ſuffri leçan eta reſuſcita ledin hiletaric: eta ecen haur cela Ieſus Chriſt cein *dio*, nic predicatzen baitrauçuet.

4 Eta hetaric batzuc ſinhets ceçaten, eta Paulen eta Silaſen compainiaco eguin citecen, eta Iaincoá cerbitzatzen çutén Grecoetaric compainia handia, eta emazte ohoraturic ez guti.

5 Baina bekaizteriaz mouituric Iudu rebelléc,

éta harturic hara huna çabiltzan guiçon gaichto batzu,eta populua bilduric,trubla ceçaten hiria:eta Iasonen etchea iauquiric,hec populura eraman nahiz çabiltzan.

6 Eta eriden etzituztenean, tira citzaten Iason eta anayetaric batzu hirico Gobernadoretara, oihuz ceudela. Hauc mundu gucia erauci vkan duten ondoan, huna-ere ethorri iҫan dirade:

7 Eta Iasonec beregana recebitu vkan ditu: eta guciec Cesaren ordenancen contra eguiten dute, dioitela berce Reguebat badela,Iesus.

8 Tharrita ceçatē bada populua eta hirico Gobernadoreac gauça hauc ançuzquitenean.

9 Baina fiadoregoa recebituric Iasonganic eta goiticoetaric,vtzi citzaten ioaitera.

10 Eta anayéc bertan gauaz idoquì citzaten campora Paul eta Silas Beroera *ioan litecençát:* cein hara ethorriric ioan baitzitecen Iudeén synagogara.

11 Eta hauc ciraden Thessalonicaco noblenetaric,ceinéc hitza recebi baitzeçaten alegrança gucirequin, egun oroz Scripturác bilhatzen cituztela,eya gauça hauc hala liradenez.

12 Eta hetaric anhitzec behinçát sinhets ceçaten,eta emazte Grec honestetaric, eta guiçonetaric ezgutic.

13 Baina iaquin ceçatenean Thessalonicaco Iuduéc ecen Beroen-ere Iaincoaren hitza Paulez denuntiatu içan cela,ethor citecen hara-ere, populua tharritatzen çutela.

14 Baina bertan Paul igor ceçaten camporât anayéc, ioan ledinçát itsas alderat beçala: baina Silas eta Timotheo egon citecen han.

15 Eta Paulen salbura heltzeco carguä hartu çutenéc, eraman ceçaten hura Atheneserano: eta *hec harenganic* manamendu recebituric Silasgana età Timotheogana, guciz bertan ethor litecen hura Baithara, parti citecen.

16 Eta Paul Athenesen hayén beguira cegoela keichatzen cen haren spiritua hura baithan, çacussanean hiria idolatriari emana.

17 Disputatzen cen bada synagogán Iuduequin, eta Iaincoa cerbitzatzen çutenequin, eta merkatuco plaçán egun oroz batzen cenequin

18 Orduan Epicuriano eta Stoiciano philosopho batzu disputatzen ciraden harequin: eta batzuc erraiten çutén, Cer erran nahi du edasle hunec? Eta bercéc *cioiten*, Iainco arrotzén eracusle dela dirudi: ceren Iesus denuntiatzen baitzerauen eta resurrectionea.

19 Eta hatzamanic hura eraman ceçaten Marsen karricara, cioitela, Iaquin ahal deçaquegu ceric den hiçaz erraitē den doctrina berri hori?

20 Ecen gauça arrotz batzu gure beharrietara ekarten dituc: nahi diagu bada iaquin gauça horiac cer erran nahi diraden.

21 (Ecen Atheniano guciac eta han egoiten ciraden arrotzac eçeinere berce gauçatara etziraden applicatzen, cembeit berriren erraitera edo ençutera baicen)

22 Orduan Paulec Marsen karricaren erdian

cegoela, erran ceçan, Athenesco guiçonác, gauça gucietan deuotegui beçala ikusten çaituztet çuec.

23 Ecen iragaiten naicela eta çuen deuotioneac contemplatzen ditudala eriden-ere badut aldarebat, ceinetan scribatua baitzén, Iaincoa eçagun gabeari. Bada eçagutu gaberic ohoratzé duçuen hura nic denuntiatzen drauçuet:

24 Mundua eta hartan diraden gauça guciac eguin dituen Iaincoa, ceruären eta lurraren Iaun delaric, *ezta escuz eguin templetan habitatzé.

Lehē 7.48.

25 *Eta ezta guiçonén escuz cerbitzatzen deussen behar *beçala*, ikussiric ecen berac emaiten drauztela guciey vicia eta respirationea eta gauça guciac.

Psal. 50.8.

26 Eta eguin vkan du natura humano gucia odol batetaric: lurrarē hedamen gauciaren gainean habita litecençat, lehenetic sasoin ordenatuac determinaturic, eta hayén habitationearen mugarriac eçarriric:

27 Iauna bilha leçatençát, aguiā haztatuz hura eridē leçaquetenez gure batbederaganic vrrun ezpadere.

28 Ecen harçaz vicitzen eta higuitzen eta içaten gara: çuen poetetaric-ere batzuc erran dutén beçala, Ecen haren leinu-ere bagara.

29 *Beraz Iaincoarē leinu garenaz gueroz, eztugu estimatu behar Diuinitateac vrrhea edo cilharra edo harria guiçonen artez edo inuentionez moldatua irudi duela.

Esa. 40.23.

30 Iaincoac bada ignorātiazco demborác dis-

ſimulaturic, orain denuntiatzen draue guiçon guciey leku gucietan emenda ditecen.

31 Ceren ordenatu baitu mundua iuſtoqui iugeaturen duen eguna determinatu duen guiçonaz, guciey eçagutzera emanic, hura hiletaric reſuſcitaturic.

32 Eta ençun çutenean hilén reſurrectionea, batzu truffatzen ciraden, eta bercéc erraiten çutén, Ençunen augu berriz horren gainean.

33 Eta hunela Paul ilki cedin hayén artetic.

34 Batzuc halere, hari iunctaturic, ſinhets cez̃até: ceinetaric baitzén Dionyſio Areopagitaere, eta Damaris deitzen cen emaztebat, eta berceric hequin.

## CAP. XVIII.

*1 Paul Corinthion languiten, 4 Diſputatzen eta Chriſtẽ predicatzen ari. 7 Handic partituric Iuſtoa deitzen cen batenean ſartzen. 8 Criſpec Iauna baithan ſinheſten. 9 Viſione Pauli aguertzen. 12 Guero da Gallionen aitzinean accuſatzen. 17 Soſthenes. 18 Paulec bere buruã arrada eraciten. 24 Appollos Iudua Epheſera ethorten*

1 GAuça hauen ondoan Paul partituric Atheneſtic, ethor cedin Corinthera.

2 Eta eridenic * Aquila deitzen cen Ponte nationeco Iudubat, cein aitzinchetic ethorri baitzén Italiatic, eta Priſcilla haren emaztea (ceren Claudec ordenatu

*Rom. 16.3.*

baitzuen Iudu guciac Romaric parti litecen) retira cedin hetara.

3 Eta ceren officio bereco baitzén, hequin egoiten cen, eta languiten ari cen. Eta hayen officioa cen tabernacle eguitea.

4 Eta diſputatzen cen ſynagogán Sabbath guciaz, eta exhortatzen cituen hambat Iuduac nola Grecoac.

5 Eta ethorri ciradenean Macedoniaric Silas eta Timotheo, Paulec Spirituaz herſturic teſtificatzen cerauen Iuduey Ieſus *cela* Chriſt.

6 Eta hec contraſtatzen eta blaſphematzen ari ciradela, *abillamenduac iharroſſiric erran ciecén, Çuen odola çuen burun gain: chahu *naiz* ni, oraindanic Gentiletarat ioanen naiz.

Lehē 13.51 mat.10.14

7 Eta handic partituric ſar cedin Iuſtoa deitzē cen *eta* Iaincoa cerbitzatzen çuē baten etcheā, ceinen etchea baitzatchecan ſynagogari.

1.Cor.1.14

8 *Eta Criſpec ſynagogaco principalaç ſinhets ceçan Iauna baithan bere etche guciarequin: Corinthianoetaric-ere anhitzec ençunic ſinhets ceçaten, eta batheya citecen.

9 Orduā errā cieçō Iaunac gauaz viſionez Pauli Ezaicela beldur, baina minçadi eta ezadila ichil.

10 Ecen ni nauc hirequin, eta nehorc eztrauc *eſcuric* eçarriren hiri gaizqui eguitera: ecen populu handia diat hiri hunetan.

11 Eta egon cedin han vrthebat eta ſey hilebethe, iracaſten çuela hayén arteā Iaincoarē hitza.

12 Baina Gallion Achaiaco Proconſul ceneā, altcha citecē gogo batez Iuduac Paulen contra,

eta eraman ceçaten iudicioco iar lekura.

13 Erraiten çutela, Leguearen cõtra hunec incitatzén ditu guiçonac Iaincoaré cerbitzatzera.

14 Eta Paulec ahoa irequi nahi çué beçala, errã ciecén Gallionec Iuduey, Baldin cembeit bidegabe, edo gaichtaqueria baliz, o Iuduac, çucenac emaité duen lekurano ſuſtenga cinçaqueiztet:

15 Baina baldin queſtione bada hitzaz eta icenéz eta çuen Legueaz ceuroc ikuſſiren duçue ecen gauça horién iuge ni ez naiz nahi.

16 Eta ken citzan hec iudicioco iar lekutic.

17 Orduan Grec guciéc hatzamanic Soſthenes ſynagogaco principala cehatzen cutén iudicioco iar leku aitzinean: eta Gallionec anſiaric batre etzuen.

18 Baina Paul oraino dembora luceſcoz *han* egonic, anayetaric congit harturic, embarca cedin Syriarát (eta harequin Priſcilla eta Aquila) *buruä arradaturic Cenchren: ecen vot çuen.

Nom. 6. 18. ber. 21. 24.

19 Guero arriua cedin Epheſera, eta hec han vtzi citzã: baina bera ſynagogara ſarthuric, diſputa cedin Iuduequin.

20 Eta hec othoiztez çaizcala dembora luciagoz hequin egon ledin, etziecén accorda.

21 Baina congit har ceçan hetaric, cioela, Neçeſſarioqui behar dut hurrenégo beſtá Ieruſalemé eguin: baina harçara itzuliren naiz çuetara, *Iaincoac placer badu: eta parti cedĩ Epheſetic.

1. Cor. 4. 19 iacq. 4. 15.

22 Eta Ceſáreara iautſi cenean, igan cedin *Ieruſalemera*: eta Eliçá ſalutaturic iautſ çedin Antiochera.

23 Eta cerbait dembora *hàn* egonic, ioan cedin chuchen chuchena Galatiaco eta Phrygiaco comarcá trebeſſaturic, confirmatzen cituela diſcipulu guciac.

1.Cor 1.12 24 Baina Iudu nationez Alexandriano* Apollos deitzen cen-bat, guiçon eloquenta, Scripturetan botheretſua, ethor cedin Epheſera.

25 Haur cen Iaunaren bidean inſtruitzen haſſia, eta ſpiritu beroz minçatzen cen, eta iracaſtẽ cituen diligentqui Iaunaren diraden gauçác, eçagutzen çuela ſolament Ioanneſen Baptiſmoa

Rom.16.3. 26 Eta has cedin frangoqui minçatzen ſynagogán. Haur ençun ceçatenean * Priſcillac eta Aquilac berequin har ceçaten, eta aitzinago declara cieçoten Iaincoaren bidea.

27 Eta Achaiarát iragan nahi cenean, *hura* exhortaturic anayéc ſcriba ceçaten diſcipuluetara recebi leçaten hura: ceinec arriuatu cenean *hara*, probetchu handi eguin baitziecén gratiaz ſinhetſi vkan çuteney.

28 Ecen viciqui garaitzen çayen Iuduey publicoqui, Scripturéz eracuſten çuela ecen Ieſus cela Chriſt.

CAP. XIX.

*1 Paul Epheſen iracaſten ari. 4 Ioanneſen Baptiſmoa 6 Eſcuén impoſitionea. 11 Paulec miraculu eguitẽ. 13 Deabruac ditu cehatzen exorciſtác. 19 Curioſitatezco liburuäc erre. 24 Demetriuſec ſeditione altchatzen. 27 Diana Epheſianoena. 29 Gaio eta Ariſtarque. 33 Alexandre.*

1 APollos Corinthen cela guertha cedin, Paul garaico bazter guciac iraganic ethor baitzedin Ephesera: eta *han* discipulu batzu eridenic errã ciecén,

2 Ala recebitu duçue Spiritu saindua sinhetsi ykan duçuenean? Eta hec erran cieçoten, Are Spiritu saindua denez-ere, eztiagu ençun.

3 Orduan dioste, Certan bada batheyatu içan çarete? Eta hec erran ceçaten, Ioãnesen Baptismoan.

4 Orduan Paulec erran ceçan, * Ioannesec batheyatu ykan du emendamẽduco Baptismoaz, ciotsala populuari, haren ondotic ethorteco cena baithan sinhets leçaten, erran nahi baita, Iesus Christ baithan.

*Lehen 1. 5. eta 11.16. matt. 3. 11. marc 1. 8. luc 3. 16. ioan 1. 26.*

5 Gauça hauc ençunic bada, batheya citecen Iesus Iaunaren icenean.

6 Eta escuac gainean eçarri cerauztenean Paulec, ethor cedin Spiritu saindua hayén gainera, eta minçatzen ciraden lengoagez, eta prophetizatzen çutén.

7 Eta guiçõ hauc gucioc ciradẽ hamabitarano.

8 Guero *bera* sarthuric synagogán, Frangoqui minçatzen cen, hirur hilebethez disputatzen eta exhortatzen ari cela Iaunaren resumari *dagozcan* gaucéz.

9 Eta nola batzu gogortzen baitziraden eta ezpaitzuten obeditu nahi, gaizqui *Iaunaren* bideaz minçatzen ciradela populuaren aitzinean, hetaric *bera* partituric, separa citzan discipuluac,

egun oroz diſputatzen ari cela Tyrãno baten eſcholán.

10 Eta haur eguin içan cen bi vrthez:*hala* non Aſian habitatzen ciraden guciéc, ençuten baitzutén Ieſu's Iaunaren hitza, hambat Iuduéc nola Grecoéc.

11 Eta coſtumatu etziraden verthuteac eguiten cituen Iaincoac Paulen eſcuz:

12 *Hala* non are erién gainera ekarten baitzituzten haren gorputz gainetic crobitchetac eta conciertoac, eta ioaiten baitziraden hetaric eritaſſunac, eta ſpiritu gaichtoac hetaric ilkiten baitziraden.

13 Orduan enſeya citecen hara huna ebilten ciraden Iudu exorciſta batzu ſpiritu gaichtoac cituztenén gainean Ieſus Iaunaren icenaren inuocatzen, erraiten çutela, Coniuratzen çaituztegu Paulec predicatzen duen Ieſuſen partez.

14 (Eta ciraden Sceua Iudu Sacrificadore principalarenic çazpi ſeme, haur eguiten çutenac)

15 Baina ihardeſten çuela ſpiritu gaichtoac, erran ceçan, Ieſus eçagutzen diat, eta Paul baceaquiat nor den: baina çuec nor çarete?

16 Eta oldarturic hetara ſpiritu gaichtoa çuen guiçonac, eta hæy garaithuric, bortcha eguin ceçan hayén contra: hala non biluzgorriric eta çaurthuric ihes eguin baitzeçatẽ etche hartaric.

17 Eta haur ethor cedin gucién eçagutzera hãbat Iuduen nola Greco Epheſen habitatzen ciradenénera: eta eror cedin beldurra hayen gucien gainera, eta magnificatzẽ cen Ieſus Iaunaren icena.

18 Eta ſinhetſi çutenetaric anhitz ethorten ciraden cõfeſſatzen eta declaratzen cituztela bere eguinac.

19 Arte curioſitatezcoz vſatu vkan çuteneccere, anhitzec *bere* liburuäc ekarriric erre citzaten gucién aitzinean: eta hayén valioa eſtimaturic eriden ceçaten berroguey eta hamar milla dinerorena.

20 Hala botheretſuqui augmentatzen cen Iaunaren hitza eta confirmatzen.

21 Gauça hauc hunela complitu ciradenean delibera ceçan Paulec Spirituaz, Macedonia eta Achaia iraganic Ieruſalemera ioaitera, cioela, Han içan ondoan, Roma-ere ikuſſi behar dut.

22 Eta igorriric Macedoniara aiutatzen çutenetaric biga *baitziraden* Timotheo eta Eraſto, bera gueldi cedin dembora batetacotz Aſian.

23 Baina eguin cedin dembora hartan truble handibat doctrinaren cauſaz.

24 Ecen Demetrius deitzen cen cilharguile, Dianaren cilharrezco templetchoguile batec, anhitz irabaz eraciten cerauen officiocoey:

25 Hec bilduric, eta halaco gaucetaco officier *ciradenac*, erran ceçan, Guiçonác, badaquiçue ecen officio hunetaric heldu diradela gure onac;

26 Eta badacuſſaçue eta badançuçue nola ez Epheſen ſolamẽt, baina quaſi Aſia gucian Paul hunec ſinhets eraciric itzuli duela populu hãdi, erraiten duela, ecen eztiradela iainco eſcuz eguiten diradenac.

27 Eta peril da ez ſolament gure gauça deſcri-

da dadin, baina are Diana handiaren templea guehiagoric deus eſtima eztadin, eta deſeguin eztadin haren maieſtate Aſia guciac eta munduac ohoratzen dutena.

28 Eta *gauça hauc* ençunic, eta hiraz betheric oihuz iar citecen, Epheſianoen Diana handiá!

29 Eta bethe cedin hiri gucia confuſionez, eta oldar citecen gogo batez theatrera, harturic Gayo eta Ariſtarche Macedonianoac, Paulen bideco lagunac.

30 Eta Paul populua baithara ſarthu nahi cenean, etzeçaten vtzi diſcipuluéc.

31 Baina Aſiaco principaletaric batzuc-ere, nola baitziradẽ harẽ adiſquide, harẽgana igorriric othoitz ceguioten, ez ledin theatrera preſenta.

32 Bada batzu bataz oihuz ceudẽ, eta berceac berceaz: ecen confus cen compainiá, eta anhitzec etzaquiten cergatic bildu içan ciraden.

33 Orduan gendetzetic campora auança ceçaten Alexandre, Iuduéc hura bulkatzen çutela. Eta Alexandrec, ichil litecen eſcuaz keinu eguinic, nahi ceraucan cauſá allegatu populuari.

34 Baina eçagutu çutenean ecẽ hura Iudu cela, altcha cedin gucietaric vozbat, quaſi bi orenez oihu eguiten çutela, Epheſianoén Diana hãdiá!

35 Orduan ſcribariac gendetzea appacegaturic, errã ceçan, Epheſeco guiçonác, cein da guiçona eztaquiana ecen Epheſeco hiria dedicatua dela Diana handiaren, eta Iupiterganic iautſi içan den imaginaren cerbitzura?

36 Nehor bada gauça hautan contraſta ecin

daitenaren gainean, appacega çaitezten beharda, eta deus desordenatuqui eztaguiçuen.

37 Ecen ekarri ukan dituçue guiçon hauc ezpaitirade ez sacrilege, ez ezpaitute çuen iaincossá diffamatzen.

38 Beraz baldin Demetriusec eta harequin diraden officierec eguitecoric badute cembeiten contra, gorte eduquiten da, eta badirade Proconsulac, elkar accusa beçate.

39 Eta baldin berce gauçaz deus galdeguiten baduçue, congregatione bidezqui bilduan concludi ahal daite.

40 Ecen peril da seditionez accusa ezgaitecen, egungo egunagatic, truble huneçaz raçoin eman ahal deçaquegun causaric eztenaz gueroz. Eta gauça hauc errã cituenean biltzarreari congit eman cieçón.

CAP. XX.

*1 Paul Macedonian, Grecian, eta Syrian. 9 Eutiche hila resuscitatu. 16 Mendecoste eguna. 18 Epheseco Ancianoac Paulec exhortatzen. 22 Heldu behar çaizquión afflictioneac aitzinetic erraiten. 26 Paulen hoguen gabea. 29 Doctor falsuac nola içanen diraden aitzinetic Paulec declaratzen. 31 Veillatzera exhortatzen. 34 Bere escuez Paul trabaillatu. 36 Othoitzá. 37 Paulen partitzeagatic fidelac nigarrez egon.*

1 BAda tumultoa appacegatu cenean, Paul disciputuac beregana deithuric eta bessarcaturic, parti cedin Macedoniarát ioaiteco.

2 Eta comarca hetan ebili cenean, eta exhortatu cituenēā hitz anhitzez, ethor cedin Greciara.

3 Eta han hirur hilebethe eguinic, cerē Iuduéc celata eguiten baitzeraucaten Syriarat embarcatu içan baliz: haren abiſua içan cen Macedonian gaindi itzultzera.

4 Eta lagund ceçan hura Sopater Beroeneſac Aſiarano: eta Theſſaloniceanoetaric, Ariſtarquec eta Secondec, eta Gaio Derbianoac, eta Timotheoc: eta Aſianoetaric, Tychiquec eta Trophimec.

5 Hauc aitzinerát ioanic iguriqui guençaten Troaſen.

6 Eta gu embarca guentecen altchagarri gaberico oguien egunén ondoan Philippeſtic, eta ethor guentecen hetara Troaſera, borz egunen buruan: non egon baiquentecen çazpi egun.

7 Eta aſteco lehen egunean oguiaren hauſtera diſcipuluac bilduac içan eta, Paul minço cen hequin (ceren biharamunean partitzeco baitzén) eta iraun ceçā *harē* propoſac gauherdi arterano.

8 Eta cen anhitz lampa gambera gorán, non bilduac baiquinaden.

9 Eta iarriric cegoela guiçon gaztebat Eutyche deitzen cenic leiho gainean, logale hādi batec harturic, Paul luçaqui minço cela, loa garaithuric eror cedin hirurgarren ſoillerutic behe-rera, eta hila altcha ceçaten.

10 Baina iautſiric Paul behera cedin haren gainera, eta beſſarcaturic erran ceçan, Etzaiteztela trubla ecen hunen arimá haur baithan da.

11 Guero iganic eta oguia hautsiric eta ianic, eta luçaqui mĩçaturic arguirano, hala parti cedĩ.

12 Eta guiçon gazteor viciric ekar ceçatẽ, eta haguitz consola citecen.

13 Eta gu vncira ethorriric embarca guentecen Assoserat, handic hartzeco guenduen Paul: ecen hala ordenatu çuen, berac bide hura oinez eguin gogoz.

14 Bada Asson gurequin bathu cenean, hura harturic ethor guentecen Mitylenera.

15 Eta handic embarcaturic, biharamunean ethor guentecẽ Chiosen aurkara: eta hurrenẽgo egunean arriua guentecen Samosera: eta Trogillen egonic, ondoco egunean ethor guentecen Miletera.

16 Ecen deliberatu çuen Paulec Ephesez aitzinago iragaitera, demboraric gal ezleçançát Asian: ecen lehiatzẽ cen baldin possible balitzayo Mendecoste egunean Ierusalemen içatera.

17 Eta Miletetic *meçu* igorriric Ephesera, dei citzan Eliçaco Ancianoac.

18 Eta harẽgana ethorri ciradenean erran ciecén, Çuec badaquiçue, Asian sar nendin lehen egunaz gueroztic, nola çuequin dembora gucian içan naicén:

19 Iauna cerbitzatzen nuela humilitate gucirequin eta anhitz nigar chortarequin, eta Iuduén celata egoitetaric ethorri içan çaizquidan tentationéquin:

20 Nola çuen probetchutaco gaucetaric eztrauçuedã deus estali, çuey declaratu eta iracat-

ſi gabe publicoqui eta etchez etche:
21 Teſtificatzen nerauela hambat Iuduey no-la Grecoey Iaincoa baitharatco emendamẽdua, eta Ieſus gure Iauna baitharatco fedea.
22 Eta orain huná, ni Spirituaz eſtecatua, ba-noa Ieruſalemera, hartan heltzeco çaizquidan gauçác eztaquizquidalaric:
23 Salbu Spiritu ſainduac hiriz hiri teſtifica-tzen baitraut, dioela ecen eſtecadurác eta tribu-lationeac ene beguira daudela.
24 Baina eztut deuſen anſiaric, eta neure vicia etzait precioſo, acaba deçadançát neure curſua bozcariorequin, Ieſus Iaunaganic recebitu du-dan carguä, Iaincoaren gratiaren Euangelioa teſtifica dadinçát.
25 Eta orain huná, nic badaquit ecen guehia-goric eztuçuela ikuſſiren ene beguithartea çue-taric batec-ere, ceinén artetic iragan bainaiz Iaincoaren reſumá predicatzen nuela.
26 Halacotz teſtificatzen drauçuet egungo e-gunean, ecen chahu naicela ni gucien odoletic.
27 Ecen eztut diſſimulatu çuey denũtia eznie-çaçuen Iaunaren conſeillu gucia.
28 Gogoa eieçue bada çuen buruëy, eta arthal-de guciari, ceinetan Spiritu ſainduac eçarri bai-tzaituzte Ipizpicu, Iaincoaren Eliçaren bazca-tzeco, cein cõqueſtatu baitu bere odol ꝓpriaz.
29 Ecen nic badaquit hau, ſarthuren diradela ene ioan ondoan otſo dorpeac çuen artera, gup-pida eztutelaric arthaldea.
30 Eta ceuron artetic iaicquiren dirade guiço-

nac denuntiatzen dituztela gauça gaichtoac, diſcipuluac bere ondoan erekar ditzatençát.

31 Halacotz veilleçaçue, orhoit çaretelaric ecen hirur vrthez gau eta egun eznaicela ceſſatu nigar chortarequin çuetaric batbederaren aduertitzetic.

32 Eta orain-ere, anayeác, gommendatzen cerauzquiotet Iaincoari eta haren gratiarẽ hitzari, *cein baita botheretſu çuen edificatzen acabatzeco, eta çuey ſaindu guciequin heretagearen emaiteco.

*cein, Iaincoa.

33 Berceren vrrhea ez cilharra ez arropá eztut guthiciatu.

34 Baina ceuroc badaquiçue *nola ene, eta enequin ciradenén behar ciraden gauçác fornitu vkan dituztén eſcu hauëc.

1.Cor.4.12 1.theſſ.2.9. 2.theſſ.3.8.

35 Gucietan eracutſi drauçuet ecẽ hunela trabaillatuz behar diradela flacuac ſupportatu, eta Ieſus Iaunaren hitzéz orhoit içan: ecen berac erran du, Gauça dohatſuagoa dela emaitea ecen ez hartzea.

36 Eta hitz hauc erran cituenean belhaurico iarriric eguin ceçá othoitze hequin guciequin.

37 Orduan nigar handi guciéz eguin cedin: eta Paulen leppora bere buruäc egotziz pot eguiten ceraucaten:

38 Triſte ciradelaric principalqui erran vkan çuen hitzagatic, ecen guehiagoric haren beguithartea ezlutela ikuſſiren. Eta vncira lagundu çaizcan.

CAP. XXI.

*5 Othoitza itsas costán. 8 Philippe Euangelistá, 9 Harē laur alabác. 10 Agabus propheta. 16 Mnason discipulu. 24, 26 Paul, bere buruā purificatzen çuela, hatzaman. 29 Trophime. 30 Seditione Paulen causaz. 33 Armadaco capitainac Paul cadenaz estecatzen.*

1 ETa embarcatu guenenea, hetaric separaturic, chuchē-chuchena ethor guentecē Cosera, eta biharamunean Rhodesera, eta handic Patrasera.

2 Eta *han* eridenic vnci Phenicerát trebessatzē çuen-bat *hartara* iganic parti guentecen.

3 Guero Cypreren aguerrira guenenean, hura vtziric ezquér, Syria alderát vela eguin guenecan, eta arriua guentecen Tyrera: ecen han vnciac behar çuen cargá descargatu.

4 Eta discipuluac eridenic egon guentecen han çazpi egun: hec Pauli erraiten ceraucaten Spirituaz, ezledin igan Ierusalemera.

5 Baina egun hec complitu ciradenean parti guentecen, guciéc emaztequin eta haourrequin laguncen guentuztela hiri lekorerano: eta belhaurico iarriric vr bazterrean othoitze eguin guenecan.

6 Guero elkar bessarcaturic, vncira igan guentecen, eta berceac beretarát itzul citecen.

7 Eta gu biagea acabaturic arriua guentecen Tyretic Ptolemaidara: eta anayeac salutaturic, egon guentecen egun-bat hequin.

8 Eta biharamunean ilkiric Paul eta harequin guenenac ethor guentecen Cesareara: eta sarthuric * Philippe Euangelistaren etchean (cein baitzén çazpietaric bat) egon guentecen hura baithan.

*Leben 6.5.*

9 Eta hunec cituen laur alaba virgina prophetizatzen çutenic.

10 Eta *han* dembora vnguisco egon guenenean, ethor cedin Iudeatic Agabus deitzen cen Prophetabat.

11 Eta guregana ethorriric eta Paulen guerricoa harturic eta *harçaz* bere oinac eta escuac estecaturic, erran ceçan, Gauça hauc erraiten ditu Spiritu sainduac, Guerrico hunen iabe den guiçona, hunela estecaturen dute Ierusalemen Iuduéc, eta liuraturen duté Gentilén escuetara.

12 Eta gauça hauc ençun guẽtuenean, othoitz eguin gueneçón guc eta leku hartan ciradenéc, ezledin igan Ierusalemera.

13 Orduan ihardets ceçan Paulec, Cer ari çarete nigarrez çaudetela, eta ene bihotza erdiratzen duçuela? Ecen ni ez estecatu içatera solament, baina Ierusalemen hiltzera-ere prest naiz Iesus Iaunaren icenagatic.

14 Bada, hari burutan ecin eman gueneçaqueonaren gainean, vtzi gueneçan, erraiten guenduela, Iaunaren vorondatea eguin dadila.

15 Eta cembeit egunen buruän *gure* hatuac harturic igan guentecen Ierusalemera.

16 Eta ethor citecen disciputuetaric-ere *batzu* Cesareatic gurequin çacarqueitela berequin

Mnaſon Cypriano iaquin-bat, diſcipulu ancianoa, cein baithan oſtatuz behar baiquenen.

17 Bada ethorri guenenean Ieruſalemera, gogotic recebi guençaten anayéc.

18 Eta biharamunean ſar cedin Paul gurequin Iacques baithara, eta Anciano guciac hara bilčitecen.

19 Eta hec beſſarcaturic, conta citzan punctuz punctu Iaincoac Gentilén artean haren miniſterioz eguin cituen gauçác.

20 Eta hec ençun citzatenean, glorifica ceçaten Iauna, eta erran cieçoten, Anayé, badacuſſac cembat milla diraden Iudu ſinhetſi dutenac: eta guciey baitacheté Iaincoaren zeloa.

21 Eta ençun dié erraitē hiçaz, ecen hic Moyſeſen vtzitera iracaſten dituala Gentilen artean diraden Iudu guciac, erraiten duála, ecen eztituztela haourrac circonciditu behar, eta eztutela ordenancén araura ebili *behar*.

22 Cer *eguiteco* da bada? oſſoqui populuac bildu behar dic: ecen ençunen dié nola ethorri aicén.

23 Eguic bada *guc* erraiten drauäguna. Laur guiçon citiagu vot eguin dutenic:

24 Hec harturic purificadi hequin, eta cōtribui eçac hequin, *buruäc arrada ditzatençát: eta daquitén guciéc ecen hiçaz ençun dituztén gaucetaric deus eztela: baina euror-ere Leguea beguiratuz abilala.

*Nomb.* 18.18 *nomb.*6. 18

25 Baina Gentil ſinhetſi dutenez den becembatean, guc ſcribatu diagu, eta ordenatu deus

halacoric beguira ezteçaten, baina beguira litecen idoley ſacrificatuetaric, eta odoletic, eta ithoetaric, eta paillardiçataric.
26 Orduan Paul guiçon hec berequin harturic, *eta* biharamunean hequin purificaturic ſar cedin templean denuntiatzen çuela purificationeco egunén complimendua, hetaric batbederagatic oblationea offrenda ledin artean.
27 Eta nola çazpi egunac ia hurren iragan baitziraden, Aſiaco Iudu batzuc hura ikuſſi çutenean templean, moui ceçaten populu gucia, eta eçar citzaten eſcuac haren gainean:
28 Heyagoraz ceudela, Iſraeltar guiçonác, hel çaquizquigute: haur da guiçona populuaren eta Leguearen eta leku hunen contra guciac leku gucietan iracaſten dituena: are guehiago Grecoac-ere erekarri ditu temple barnera, eta prophanatu du leku ſaindu haur.
29 (Ecen lehen ikuſſi vkan çutén Trophime Epheſianoa hirian harequin, cein vſte baitzutén Paulec temple barnera eraman vkan çuela.)
30 Eta moui cedin hiri gucia, eta oldar cedin populua: eta Paul hatzamanic templetic campora idoquiten çutén: eta bertan borthac erts citecen.
31 Baina hec hura hil nahiz çabiltzala, hel cedin famá *garniçoinaren* bandaco Capitainagana, ecen Ieruſaleme gucia nahaſſi cela.
32 Ceinec ordu berean gendarmeſac eta Centenerac harturic laſter eguin baitzeçan hetara: eta hec ikuſſi cituztenean Capitaina eta gẽdar-

mesac gueldi citecen Paulen cehatzetic.

33 Orduan hurbilduric Capitainac har ceçan hura, eta mana ceçan esteca ledin bi cadenaz: eta interroga ceçan nor licén, eta cer eguin çuen.

34 Eta batzu bataz ceuden oihuz gendetzean eta berceac berceaz: eta nahastecamenduaren causaz *deus* seguric ecin eçagutuz, mana ceçan fortaleçara eraman ledin.

35 Eta ethorri cenean gradoetara, guertha cedin gendarmeséz eramaiten baitzén gēdetzearen boaldaren causaz.

36 Ecen iarreiquiten çayón populuco gendetzea heyagoraz, Ken eçac hori.

37 Eta Paulec fortaleçán sartzeracoan diotsa Capitainari, Hauçu naiz hirequin minçatzera? Harc erran cieçón, Grecquic badaquic?

38 Ezaiz hi Egyptiano iragan egun hautan seditionebat viztu duana, eta laur milla gaichtaguin desertura retiratu dituana?

39 Eta erran ceçan Paulec, Ni segur guiçon Iudua nauc Tarsen, Ciliciaco hiri famatuan burgés iayoa: othoitz eguiten drauat bada, permetti ieçadac minça naquión populuari.

40 Eta harc permettitu ceraucanean, Paulec, gradoetan cegoela, ichilcera escuaz keinu eguin cieçón populuari, eta silentio handi eguin içanic, minça cedin Hebraicoén lengoagez, erraiten çuela,

CAP. XXII.

*1 Paulen defensá. 12 Ananias. 21 Paul Gentilén Apostolu. 22 Populuac Paul hil eraci nahi. 24 Capitainac hura açota eraciten. 25 Paul Romaco burgés. 30 Estecaduretaric lachatu.*

1 GViçon anayeác eta aitác, ençuçue orain çuec baithan emaiten dudan defensá.
2 (Eta ençun vkan çutenean ecen Hebraicoén lengoagez minço litzayela, hambat silentio handiago eguin ceçaten:eta erran ceçan,)
3 Ni naiz guiçon Iudua, Tarse Ciliciacoan iayoa, baina hacia hiri hunetan berean Gamalielen oinetan, aitén Leguearen perfectionean instruitua, Iaincogana zelotaco nincela, egun çuec guciac-ere çareten beçala:
4 *Doctrina haur persecutatu vkan dudana heriorano, estecatuz eta presoindeguietara eçarriz hambat guiçonac nola emazteac: 1.Tim.1.3.
5 Sacrificadore subiranoa-ere testimonio dudan beçala, eta Ancianoén compainia gucia: are hetaric guthunac anayetara harturic, Damascerat ioaiten nincén, han ciradenac estecaturic Ierusalemera ekartera, puni litecençát.
6 *Eta guertha cedin bidean ioaiten eta Damascera hurbiltzen nincela egu-erdi irian, subitoqui cerutico chistmist ançoco argui handi batec ingura bainençan: Lehen 9. 3.
7 Eta eror nēdin lurrera, eta ençun neçan voz-

bat, cioſtala, Saul, Saul, cergatic ni perſecutatzen nauc?

8 Eta nic ihardets neçan, Nor aiz Iauna? Eta Iaunac erran cieçadan, Ni nauc Ieſus Nazareno hic perſecutatzen duana.

9 Eta enequin ciradenéc, arguia ikus ceçaten, eta icit citecen, baina enequin minço cenaren voza etzeçaten ençun.

10 Orduan erran neçán, Cer eguinen dut Iauna? Eta Iaunac erran cieçadan, Iaiquiric oha Damaſcera, eta han erranen çaizquic, eguin ditzán ordenatu çaizquian gauça guciac.

11 Eta ceren *deus* ezpainuen ikuſten argui haren claretatearen cauſaz, enequin ciradenéz eſcutic eraman içanic Damaſcera ethor nendin.

12 Gueroztic Ananias Leguearen araura Iaincoaren beldur cen guiçombat, *han* egoiten ciraden Iudu gucietaric teſtimoniage ona çuena, enegana ethor cedin.

13 Eta ene aldean cegoela erran cieçadan, Saul anayé, recebi eçac ikuſtea. Eta nic ordu hartan berean harenganat beha neçan:

14 Eta harc erran ceçan, Gure aitén Iaincoac elegitu au hi bere vorondatearen eçagutzeco eta Iuſtoaren ikuſteco, eta haren ahotic vozaren ençuteco.

15 Ecen teſtimonio içanen atzayo guiçon guciac baithara, ikuſſi eta ençun dituan gaucéz.

16 Orain bada cer berancén duc? Iaiqui adi eta batheyadi, eta chahu itzac eure bekatuac, Iaunaren icena inuocaturic.

17 Guero guertha çequidan, ni Ierusalemera bihurtu nincenean, eta templean othoitz eguiten nengoela transporta bainendin spirituz.

18 Eta ikus baineçan ciostana, Lehiadi eta ilki adi fitetz Ierusalemetic, ecen eztié recebituren *hic* niçaz emanen drauean testimoniagea.

19 Eta nic errã neçan, Iauna, hec baceaquié ecen ni presoindeguira eçarten ari nincela eta açotatzen nituela synagoga gucietan hi baithan sinhesten çutenac.

20 Eta issurten cenean Esteben hire martyrarẽ odola, ni-ere present ninduán, eta consentitzen nián harẽ hiltzean, eta beguiratzen nitián hura hiltzen çutenén arropác.

21 Eta *harc* errã cieçadã, Habil: ecen nic Gentiletara vrrun igorriren aut.

22 Eta ençuté çutén hura hitz hunetarano: orduan altcha ceçaten bere voza, erraiten çutela, Ken eçac lurretic horrelacoa: ecen eztuc raçoin hori vici den.

23 Eta hec heyagoraz ceudela, eta bere arropác iharrosten eta airerat errhautsa iraizten çutela.

24 Mana ceçan Capitainac hura fortaleçara eraman ledin, eta ordena ceçan açoteaz examina ledin, [r]iaquin leçançát cer causagatic hala oihuz leuden haren contra.

25 Bada hedéz estecatu çuten ondoan, erran cieçón aldean çayón Capitainari Paulec, Haucu çarete Romaco *den* baten eta condemnatu eztenaren açotatzera?

26 Eta *haur* ençun çuenean Centenerac ioanic Capitainagana, conta cieçón hari, cioela, Ikussac cer eguiteco duán: ecen guiçon haur Romaco *burgés* duc.

27 Eta capitainac ethorriric harengana, erran cieçón, Erran ieçadac, eya hi Romaco *burgés* aicenez. Eta harc erran ceçan, Bay.

28 Eta ihardets ceçan Capitainac, Nic somma handitan burgesia hori acquisitu diat. Eta Paulec dio, Eta ni iayo-ere *burgés* nauc.

29 Bertan orduan retira citecen harenganic hura examinatu behar çutenac: eta Capitainaere beldur cedin, eçaguturic ecen Romaco *burgés* cela, eta ceren estecatu baitzuen.

30 Eta biharamunean segura iaquin nahiz cer causagatic accusatzen licén Iuduéz, lacha ceçan estecaduretaric: eta mana ceçan, Sacrificadore principalac bil litecen, eta hayén conseillu gucia: eta ekarriric Paul presenta ceçan hayén aitzinean.

## CAP. XXIII.

1 *Paul defendatzen.* 2 *Ananiasec muthurrean eman eraciten.* 5 *Eta Paulec haren iniuriatzeaz bere buruä desencusatzen.* 6 *Paulec Phariseu dela erraiten* 8 *Sadduceuén errora.* 10 *Paul fortaleçara eramaiten.* 11 *Iaunac consolatzen.* 12 *Iudu batzuc vot eguin haren contra:* 16 *Paul hunez aduertitu,* 23 *Guero Felixgana eraman içan.* 25 *Felixi Capitainac scribatzen.*

1 ETa beguiac conſeillua baitharát chuchenduric Paulec erran ceçan, Guiçon anayeác, nic cõ ſcientia on gucitan cerbitzatu vkan dut Iaincoa egun hunetarano.

2 Orduan Ananias Sacrificadore ſubiranoac mana citzan aldean çaizconac, hura muthurreã io leçaten.

3 Orduan Paulec erran cieçón, Cehaturen au hi Iaincoac, paret churituá: eta hi baihago Leguearen arauez ene iugeatzeco, eta Leguearen contra manatzen duc ni ceha nadin?

4 Eta preſent ciradenéc erran ceçatẽ, Iaincoaren Sacrificadore ſubiranoa iniuriatzen duc?

5 Eta erran ceçan Paulec, Anayeác, ez naquian Sacrificadore ſubirano cela: ecen ſcribatua da, *Eure populuaren princeaz eztuc gaizqui erranen.

Exo.22.28

6 Eta iaquin çuenean Paulec ecen partida bata cela Sadduceuetaric, eta bercea Phariſeuetaric, oihuz iar cedin conſeilluã, Guiçon anayeác, *ni Phariſeu naiz, Phariſeu ſeme: hilén ſperãçáz eta reſurrectioneaz ni accuſatzen naiz.

Ber.24.22 philip.3.5.

7 Eta haur erran çuenean, eguin cedin ſeditione Phariſeuén eta Sadduceuén artean: eta çathi cedin biltzarrea.

8 Ecen Sadduceuéc erraiten dute eztela reſurrectioneric, ez Ainguerurie ez ſpirituric: baina Phariſeuéc bata eta bercea aithor dituzté.

9 Eta eguin içã cen heyagora handibat: orduã

Phariſeuén alde *ciraden* Scribác iaiquiric bacɩharducaten, erraiten çutela, Eztugu deus gaitzic eriden guiçon hunetan, baina baldin ſpiritubat edo Ainguerubat minçatu baçayó ezgaitecela Iaincoaren contra bataillа.

10 Eta ſeditione handi eguin içanic, Capitainac beldurturic, heçaz Paul çathica ledin, mana ceçan gendarmeſac iauts litecen hayén artetic haren harapatzera eta fortaleçara eramaitera.

11 Eta ondoco gauean Iaunac, hari preſentatzen çayola, erran cieçón, Paul, auc bihotz on: ecen nola teſtificatu baituc niçaz Ieruſalemen, hala behar duc Roman-ere teſtificatu.

12 Eta arguitu cenean, Iuduetaric batzuc eguinic biltzarre eta vot maledictionerequin, lioitela, ezlutela ianen ez edanen Paul hil leçaqueteno.

13 Eta berroguey baino guehiago ciraden cõiuratione haur eguin çutenac.

14 Hec ethorriric Sacrificadore principaletara eta Ancianoetara, erran ceçaten, Vot eguin dugu maledictionerequin, deus eztugula daſtaturen Paul hil duqueguno.

15 Orain bada çuec iaquin eraci ieçoçue Capitainari, conſeilluaren vorondatetic bihar hura erekar dieçaçuela, harçaz cerbait hobequi eçagutu nahi bacindute beçala: eta gu hura hurbil dadin baino lehen, preſt gara haren hiltzera.

16 Baina Paulen arrebaren ſemea ençunic celatác, ethor cedin, eta ſarthuric fortaleçara conta cieçón Pauli.

17 Eta Paulec Centeneretaric bat beregana deithuric, erran cieçón, Guiçon gazte haur eramac Capitainagana, ecen badic cerbait hari erran beharric.

18 Harc bada hura harturic eraman ceçan Capitainagana, eta erran ceçan, Paul presonerac beregana deithuric othoitz eguin dirautac, guiçõ gazte haur hiregana ekar neçan, ceinec baitu cerbait hiri erran beharric.

19 Eta Capitainac hura escutic harturic, eta appart retiraturic galde eguin cieçón, Cer duc niri erran beharric?

20 Eta *harc* erran ceçan, Iuduéc ordenatu dié hiri othoitz eguitera, bihar Paul conseillura igorri deçán, hobequiago cerbaitez informatu nahi balirade beçala harçaz:

21 Baina hic eztieceala accorda: ecen hayén artecoric berroguey guiçon baino guehiago haren celata diaudec: vot eguinic maledictionezco penán, eztutela ianen ez edanen hura hil duqueiteno: eta orain prest diaudec, hic cer promettaturen drauëan beguira.

22 Capitainac bada igor ceçan guiçon gaztea, hari manaturic, nehori ezlerrõ nola gauça hauc hari dclaratu cerauzcan.

23 Eta deithuric bi Centenér erran ciecén, Eduquitzaçue prest ber-ehun gendarmés Cesarearano ioaiteco, eta hiruroguey eta hamar çamaldun, eta ber-ehun archer, gauaren heren oreneco.

24 Eta den abre prestic, igan eraciric Paul sal-

buric eraman deçatençát Felix gobernadore handiagana.
25 Eta ſcriba cietzon letra batzu tenor hunetacoric,
26 Claude Lyſiaſec Felix gobernadore guciz-co excellentari, ſalutatione.
27 Guiçon haur Iuduéz hatzamana, eta ia heçaz hiltzeco cegoela, ethorriric garniçoinarequin edequi diraueat, eçaguturic ecen Romaco *burgés* cela.
28 Eta iaquin nahiz cer cauſagátic accuſatzen lutén, eraman vkán diat hayén conſeillura.
29 Cein eridē baitut accuſatzē cela berén Legueco queſtionéz, eta herioric edo preſoinic mereci luen hoguenic batre etzuela.
30 Eta aduertitu içanic guiçon huni Iuduéz eguiten çaizcan celatéz, bertan igorri vkan diát hiregana: manamendu eguinic accuſaçaley-ere, hunen contretaco dituzten gauçác hire aitzinean erran ditzaten. Vngui aicela.
31 Gendarmeſéc bada hæy manatu içan çayen beçala, Paul harturic eraman ceçaten gauaz Antipatriſera.
32 Eta biharamunean vtziric çamaldunac harequin loacençát, itzul citecen fortaleçara.
33 Eta hec Ceſareara ethorriric eta Gobernadore handiari letrác emanic, Paul-ere haren aitzinera preſenta ceçaten.
34 Eta iracurri citueneā Gobernadore handiac *letrác*, eta cer prouinciataco cē hura interrogatu çueneā, eta eçaguturic ecen Ciliciaco cela:

35 Ençunen aut dio, hire accusaçaleac-ere ethorri diratenean. Eta mana ceçan Herodesen palatioan beguira ledin.

CAP. XXIIII.

*3 Tertullec Paulen contra requesta eguiten. 10 Paulec bere buruägatic ihardesten, 14 eta bere vicitzeaz eta fedeaz raçoin emaiten. 24 Felix gratioso Paulgana. 25 Paulec Felixi eta haren emazteari Christ predicatzen. 28 Festus Felixen successor.*

1 ETa borz egunẽ buruän iauts cedin Ananias Sacrificadore subiranoa Ancianoequin, eta Tertulle *deitzen cen* orator batequin: hec compari citecen Gobernadore handiaren aitzinean Paulen contra.

2 Eta Paul deithu içanic, Tertulle has cedin accusatzen, cioela,

3 Felix gucizco excellenteá eçagutzẽ diagu esquer gucirequin gauça gucietan eta leku gucietan, ecen guc ardietsi dugula baque handia hiçaz, eta eure prouidentiaz populu hunetã eguin dituan ordenança onéz.

4 Baina luçaquiago eduqui ezeçadan, othoitz eguiten drauat ençun gaitzán gutibat eure ontassunagatic.

5 Ecen eriden diagu guiçon pestilentioso haur seditione altchatzen drauela Iudu guciey mun-

du orotan, eta Nazarenoén sectaren buru *dela:*
6 Cein templearen profanatzen-ere enseyatu içan baita, eta hatzamanic nahi vkan diagu gure Leguearen arauez iugeatu.
7 Baina ethorriric Lysias capitainac bortcha handirequin edequi vkan diraucuc gure escuetaric.
8 Haren accusaçaleac hiregana ethor litecen manaturic: beraganic eurorrec informatione eguinic iaquin ahal ditzaquec gauça guciac, ceineçaz guc hori accusatzen baitugu.
9 Eta consenti ceçaten Iuduec-ere, erraiten çutela, gauça hauc hala liradela.
10 Baina ihardets ceçan Paulec, Gobernadore handiac minça ledin hari keinu eguinic, Ceren baitaquit anhitz vrthe duela natione hunen iuge aicela, gogoticago neure buruäz ihardestén diát:
11 Ikussiric ecen hic eçagut ahal deçaqueala nola hamabi egun baino guehiago eztiraden, igan mincenetic Ierusalemera, adoratzera.
12 Eta eznié templean eriden nehorequin disputatzen ari naicela, edo gende biltzen, ez synagoguetan, ez hirian:
13 Eta ecin phoroga citzaqueé ni orain accusatzen nauten gauçác.
14 Baina haur aithortzen drauät, ecē secta deitzen dutē bide haren arauez, hunela dudala *neure* aitén Iaincoa cerbitzatzen, sinhesten ditudalaric Leguean eta Prophetetan scribatuac diraden gauça guciac.

15 *Eta* sperança dudalaric Iaincoa baithan, içanen dela hilén resurrectionea, hambat iustoena nola iniustoena, ceinen beguira berac-ere baitaude.

16 Halacotz pena-ere eçarten diát, conscientiá dudan Iaincoagana eta guiçonetara trebucu gabe bethiere.

17 Eta anhitz vrtheren buruän, ethorri içan nauc neure nationera * elemosyna eta oblatione eguitera. Lebē 11.29

18 *Ordu hartan eriden nié purificatua templeã, ez *ordea* gendetzerequin, ezeta tumulturequin, Asiaco Iudu batzuc. Lebē 21.26

19 Ceinéc behar baitzutén hire aitzineã comparitu, eta ni accusatu, baldin deus ene contra baçutén.

20 Edo hauc beróc errã beçate baldin cerbait gaichtaqueria eriden badute nitan, ni conseilluã presentatu içan naicenean.

21 Hayén artean nengoela oihu eguin nuenecо voz bakoitz haur baicen, *Hilén resurrectioneaz ni accusatzan naiz egun çueçaz. Lehen 23.6

22 Gauça hauc ençunic, Felixec igor citzã hec berce aldi batetarano, cioela, Secta horrez cer den diligentquiago eçagutu duquedanean, Lysias capitaina iautsi datenean, ossoqui eçaguturẽ duquet çuen eguitecoa.

23 Eta mana ceçan Centenerbat, beguira ledin Paul eta largoan eçar ledin, eta nehor ez leçan empatcha haren eçagunetaric haren cerbitzatzetic edo harengana ioaitetic.

24 Eta cembaitrabeit egunean buruän, Felixec ethorriric Drusilla bere emaztearequĩ, cein baitzén Iudaca, erekar ceçan Paul, eta ençun ce çan hura *minçatzen* Christ baithango fedeaz.

25 Eta nola hura disputatzen baitzén iustitiáz, eta temperantiáz, eta içateco den iudicioaz, spã taturic Felixec ihardets ceçan, Oraingotz habil, eta aicinaric dudanean deithuren aut.

26 Berahala escun gainean sperança çuelaric ecen Paulec cerbait diru emanen ceraucala, larga leçançat halacotz-ere maiz erekarten çuen eta minçatzen cen harequin.

27 Eta bi vrtheac complitu ciradenean, har ceçan successor Felixec Porcius Festus: eta placer eguin nahiz Iuduey Felixec vtzi ceçan Paul presonér.

## CAP. XXV.

*2 Sacrificadore subiranoa eta Iudu principalac Paulen contra fauore esquez egon. 10 Paulec bere buruä Festusen aitzinean defendatzen, 11 guero Cesargana appellatzen. 13 Festusec Agripparequin eta Bernicerequin Paullen eguitecoa aippatzen. 24 Cergatic eztuen Festusec Paul condemnatu.*

1 FEstus bada prouinciã sarthuric hirur egunen buruän ioan cedin Ierusalemera Cesareari c.

2 Eta compari citecen haren aitzinean Sacrificadore subiranoa eta Iuduén arteco principalenac Paulen contra, eta othoitz

eguiten ceraucaten.

3 Fauore esquez ceudela haren contra, hurá erekar leçançát Ierusalemera: celata çaizcolaric hura bidean hil leçatençat.

4 Eta Festusec ihardets ceçan, vngui beguiratua içanen cela Paul Cesarean, eta bera sarri *haraco* licela.

5 Bada çuetaric (dio) ahal ditecenac, elkarrequin iauts bitez, eta baldin cembeit hoguẽ guiçon haur baithan bada accusa beçate.

6 Eta hamar egun baicen hayén artean egon gaberic, iauts cedin Cesareara: eta biharamunean iarriric iudicioco alkian, mana ceçan Paul erekar ledin.

7 Hura hara ethorri cenean ingura ceçaten Ierusalemetic iautsi içan ciradẽ Iuduéc accusatione anhitz eta piçuric ekartẽ çutela Paulen contra, cein ecin phoroga baitzitzaqueizten:

8 Ihardestẽ çuelaric Paulec, ecen deusetan ezluela faltatu Iuduén Leguearen contra, ez templearen contra, ez Cesaren contra.

9 Baina Festusec atseguin eguin nahiz Iuduey, ihardesten ceraucala Pauli, erran ceçan, Nahi aiz Ierusalemera igan *eta* han gauça hauçaz iugeatu ene aitzinean?

10 Eta erran ceçan Paulec Cesaren iudicioco alki aitzinean niagoc, non behar bainaiz iugeatu. Iuduey deusetan eztirauẽat iniuriaric eguin, hic-ere vngui daquián beçala.

11 Ecen baldin gaizquiric eguin badut, edo deus herio mereci duenic accommettitu badut,

eztiát hiltzera refusatzen: baina baldin horiéc accusatzen nautenetaric deus ezpada, nehorc horiéy ecin eman nieçaqueec: Cesargana appel latzen nauc.

12 Orduan Festusec conseilluarequin minçaturic, ihardets ceçan, Cesargana appellatu aiz? Cesargana ioanen aiz.

13 Eta cembeit egunen buruän Agrippa reguea eta Bernice iauts citecen Cesareara Festusen salutatzera.

14 Eta anhitz egun han egonic Festusec Regueri aippa cieçón Paulen eguitecoa, erraitẽ çu ela, Guiçon-bat vtzi içan duc Felixez presonér:

15 Ceinen causaz, ethorri nincenean Ierusalemera, compari baitzitecen Sacrificadore principalac eta Iudueń Ancianoac, haren contra condemnatione requeritzen çutela.

16 Eta ihardetsi diraueat, eztutela Romanoéc costuma nehorẽ heriotara liuratzeco, accusatzẽ denac *bere* accusaçaleac aitzineã dituqueeno, eta defendatzeco leku har deçaqueeno hoguenaz.

17 Bada huna ethorri ciradenean, luçamenduric batre gabe, biharamunean iudicioco alkian iarriric, mana nieçán ekar ledin guiçona.

18 Haren accusaçaleac han present ciradela, etzeçatean hoguenic batre ekar, nic vste nuenaren gainean.

19 Baina questione batzu citiztean haren contra berén superstitioneaz, eta edocein Iesus hilic vici licela Paulec seguratzen çuen batez.

20 Eta nic, halaco questioneaz eguitecotan i-

çanez, erran nieçoán, eya nahi licenez Ierusalemera ioan, eta han iugea ledin gauça hauçaz.
21 Baina ceren appella baitzedin reserua ledin çát Augustoren eçagutzera, mana nieçan beguira ledin hura igor neçaqueno Cesargana.
22 Agrippac orduan erran cieçón Festusi, Nahi niquec neurorrec-ere guiçona ençun. Eta harc, Bihar, dio, ençunen duc.
23 Bada biharamunean ethorri ciradenean Agrippa eta Bernice pompa handirequin, eta sarthu ciradenean audiencián capitainequin eta hi rico gendé authoritatezcoequin: Festusen manamenduz erèkar cedin Paul.
24 Eta Festusec dio, Regue Agrippá, eta hemen gurequin çareten guciác, badacussaçue gui çon haur, hunez Iuduén compainia gucia minçatu içan çait hambat Ierusalemẽ nola hemen, heyagoraz, hunec eztuela guehiagoric vici behar.
25 Baina nic eriden dut, deus hunec eztuela eguin herio mereci duenic: badaric-ere bera Augustogana appellatu denaz gueroz, deliberatu dut harengana igortera.
26 Huneçaz cer seguric scriba dieçodan iaunari eztut. Halacotz ekarri vkan dut çuetara, eta principalqui hiregana, regue Agrippá, informatione eguinic cer scriba dudançát.
27 Ecen eztela raçoinic irudi daut, presonér baten igortea, eta haren contrataco hoguenac eztitecen notifica.

CAP. XXVI.

*2 Paulec bere vicitzeaz eta ſedeaz raçoin emaiten. 5 Phariſeu dela erraiten. 8 Reſurrectionea. 18 Bekatuén barkamendua. Penitentiá, conuertitzea, obrác. 24 Feſtuſec Paul ſobera iaquinez erho ſtimatzen.*

1 AGrippac orduan Pauli erran cieçón, Permettitzẽ çaic eure buruägatic minçatzea. Orduan Paul eſcua hedaturic has cedin raçoin emaiten, *cioela,*
2 Regue Agrippá, dohatſu neure buruä eſtimatzen diat ceren egun hire aitzinean ihardetſi behar baitut, Iuduez accuſatzẽ naicẽ gauça guciez
3 Principalqui ceren baitaquit eçagutzen dituala Iudueń artean diraden coſtuma eta queſtione guciac: halacotz othoitz eguiten drauat, patientqui ençun néçan.
4 Bada ene vicitze gaztetaſſunetic eramã dudanaz den becembatean, eta ceric lehẽ hatſetic içan den ene nationean Ieruſalemen, badaquite Iudu guciéc:
5 Lehendanic eçaguturic (baldin teſtificatu nahi badute) nola neure aitzinecoacdanic gure religioneco ſecta gucizco excellentaren arauez vici içan naicen Phariſeu.
6 Eta orain Iaincoaz gure aitey eguin içan çayen promeſſeco ſperançaren cauſaz, iudicioan accuſaturic nago.
7 *Promes* hartara gure hamabi leinuéc ardura gau eta egun *Iaincoa* cerbitzatzén dutela hel-

duren diradela sperança duté, cein sperançaz (o Regue Agrippá) Iuduéc ni accusatzen bainaute.

8 Cer?sinhets ecin daitenetan daducaçue çuec baithan, Iaincoac hilac ressuscitatzen dituela?

9 Eta niçaz den becembateã irudi içan çait ecen Iesus Nazarenoren icenaren cõtra resistentia handi eguin behar nuela:

10 *Eta eguin-ere badut Ierusalemen: eta anhitz saindu nic presoindeguietan enserratu vkã dut, Sacrificadore principaletaric bothere vkanic:eta nehorc hiltzẽ cituenean *neure* sententiá emaiten nuen.

*Leben* 8,3.

11 Eta synagoga gucietan maiz punitzen nituela bortchatzen nituen blasphematzera: eta sobera minthuric hayén contra, persecutatzen nituen hiri arrotzetarano.

12 Dembora hartan *Damascerat-ere ioaiten nincela Sacrificadore principalén bothereareq uin eta commissionearequin.

*Leben* 9. 2.

13 Egunaren erdian, o Regué, bidean ikus nieçán cerutico arguibat iguzquiarena baino claroagoric, arguitzen guentuela ni eta enequin bidean ioaiten ciradenac.

14 Eta gu guciac eroriric lurrera,ençun nieçán vozbat niri minço çaitadala, eta ciostala Hebraicoén lengoagez, Saul, Saul, cergatic ni persecutatzen nauc? gogor duc hiretaco akuloén contra ostico eguitea.

15 Nic orduan erran nieçán, Nor aiz Iauna? Eta harc erran cieçadán, Ni nauc Iesus hic per-

ſecutatzen duana.

16 Baina iaiqui adi, eta ago çutic eure oinén gainean: ecen hunegatic aguertu natzaic, ordena ençadançat miniſtre eta ikuſſi dituán eta aguerturen natzayán gaucen teſtimonio:

17 Idoquiten audalaric populu *horretaric* eta Gentiletaric, ceinetara orain igorten baihaut,

18 Irequi ditzançat hayén beguiac, conuerti ditecençát ilhumbetic arguira, eta Satanen botheretic Iaincoagana, recebi deçatençát bekatuen barkamendua, eta çorthea ſanctificatuén artean, ni baithango fedeaz.

19 Hunegatic, o Regue Agrippá, eznitzayoc deſobedient içan cerutico viſioneari.

20 Baina Damaſcen ciradeney lehenic, eta Ieruſalemen, eta Iudeaco comarca gucian *ciradeney*, guero Gentiley-ere predicatu diraueat emenda litecen eta conuerti Iaincoagana, obrác eguiten lituztelaric emenda mẽdutaco digneac.

Lehẽ 21.30 21 Cauſa hunegatic Iuduac* ni templean hatza manic enſeyatu içan dituc ene hiltzen:

22 Baina Iaincoaren aiutaz aiutatu içanic irau̧ diát egungo egunerano, teſtificatzen drauẽdala hambat chipiey nola handiéy, eta deus erraiten eznuela Prophetéc eta Moyſeſec ethorteco ciradela aitzinetic erran dutén gauçaric baicen:

23 *Ecen* behar cela Chriſtec ſuffri leçan, eta hilén reſurrectioneco lehena licén, ceinec populu huni eta Gentiley arguia denuntiatu behar baitzerauen.

24 Eta gauça hauc bere defenſatan erraiten ci-

tuela Festusec ocengui erran ceçan, Çoratu aiz Paul,letretaco iaquin handiac çoratzen au.
25 Eta Paulec, Eznauc çoratzen, dio, Festus gucizco excellẽtea, baina eguiazco eta adimendu onetaco hitzac erraiten citiát.
26 Ecen baceaquizquic gauça hauc Reguec, ceinen aitzinean minço-ere bainaiz frangoqui: ceren estimatzen baitut gauça hautaric eztela deus harc eztaquianic: ecen gauça haur eztuc çokoan eguin içan.
27 O regue Agrippá, sinhesten dituc Prophetac? baceaquiat ecen sinhesten dituala.
28 Eta Agrippac erran cieçón Pauli,Hurrensu gogatzen nauc Christino eguin nadin.
29 Orduan Paulec errã ceçan, Iaincoa baithan desir niquec bay hurrensu bay choil, ez hi solament,baina ni egun ençuten nauten guciac-ere eguin cindeizten halaco, nolaco ni bainaiz, estecaillu hauc salbu.
30 Eta gauça hauc *harc* erran cituenean, iaiqui cedin Regue, eta Gobernadorea, eta Bernice, eta hequin iarri içan ciradenac.
31 Eta appartatu ciradenean bere artean minço ciraden,cioitela, Deus herio edo presoindegui mereci duen gauçaric eztu eguiten guiçon hunec.
32 Eta Agrippac Festusi erran cieçón, Larga ahal cieitean guiçon haur baldin appellatu içan ezpaliz Cesargana.

CAP. XXVII.

*1 Paul Romara eramaiten, 22 Eta harc Iaincoaren aiutaren beguira egoitera bere lagunac exhortatzen, 25 Fedea. 33 Paulec refectione hartzera compainiá incitatzen. 35 Eta Iaincoa gucién aitzinean regratiaturic iaten. 41 Vncia eta goitico gauçác desseguiten dirade eta nehor ez galtzen.*

1 ORdenatu içan cenean gu Italiarát embarcaturen guenela, eman cietzoten bay Paul bay berce presonér batzu Iulio deitzen cen Centener Auguftoren bandaco bati.

2.Cor.11.25.

2 *Eta iganic Adramytteco vnci batetara, Asiaco comarquetara ioaitera parti guentecen, eta gurequin cen Aristarche Macedo Thessaloniceanoa.

3 Eta ondoco egunean arriua guentecen Sidonera, eta Iulioc humanoqui Paul tractaturic, permetti ceçan adisquidetarat ioanic, heçaz tracta ledin.

4 Guero handic partituric Cypre beherera io gueneçan, ceren haice contreac baitziraden.

5 Eta Ciliciaren eta Pamphyliaren aurkan den itsassora iraganic, ethor guentecen Myra Lyciaco hirira.

6 Eta han Centenerac eridenic Alexandriaco vnci Italiarát ioaiten cen-bat, hartara sar eraci guençan.

7 Eta anhitz egunez baratch ioaiten guenela, eta nequez Gnidaco aurkara helduric, haiceac

permettitzen etzeraucularic, iragan guentecen Creta beherera Salmonen aurkán.
8 Eta nequez hura iragaiten guenduela, ethor guentecen Portu-ederrac deitzen den leku batetara, ceinen aldean baitzén Laſeaco hiria.
9 Eta ceren anhitz dembora iragã baitzén, eta ia vrean ioaitea perilós, ceren ia barura-ere iragan baitzén, conſeillatzen cituen Paulec,
10 Cioſtela, Guiçonác, badacuſſat ecen itſaſſoan ioaitea ez ſolament cargaren eta vnciaren; baina gure vicién-ere peril eta calte hãdirequin içanen dela.
11 Baina Centenerac ſinheſtenago çuen gobernaçalea eta pilotua, ecen ez Paulec erraiten cituen gauçác.
12 Eta ceren portua ezpaitzen leku onean neguären iragaiteco, guehiagoac opinionetaco ciraden hãdic-ere partitzera, neholere Phenicera arriua ahal litezquenez, han neguären iragaiteco, cein baita Africaco eta Choroco haiceari dagocan Cretaco portubat.
13 Orduan egu-erdi haicea emequi altchatzen haſſiric, bere intentionearen complimenduan ciradela vſtez, partituric, coſtabazterca ceçaten aldetſuaz Creta.
14 Baina handic ſarriſco altcha cedin harenganaco aldetic haice tempeſtateçu Euroclydon deitzen den-bat.
15 Eta vncia haiceaz eraman içan cenean, hala non contra ecin ioan baitzaiten, *haiceari vncia* abandonnaturic eramaiten guenén.

16 Eta Clauda deitzen den iſlato baten behe-rera iragan guenenean, nequez batelaren iabe içan ahal guenen.

17 Hura tiraturic marinerec remedio guciac bilhatzen cituztén, vncia beheretic herſturic: eta Syrtera eror beldurrez, velác erautſiric, berahala eramaiten ciraden.

18 Eta ceren tempeſtate hãdiz tormentatzen baiquenén biharamuneã egoizte eguin ceçatẽ.

19 Guero hereneco egunean gueuroc gure eſcuz vncico apparaillua egotz gueneçan.

20 Eta nola ez iguzquiric ez içarric anhitz egunez ezpaitzequigun aguer, eta tempeſtate handiac hertſen baiquentuen guehiagoric ſalua ahal guẽtezquelaco ſperãça gucia gal gueneçã.

21 Baina dembora lucez ian gaberic egon içan ciradenean, orduan çutic Paulec hayén artean, erran ceçã, O guiçonác, behar çatequeen ni ſinhetſiric Cretatic ezquinén partitu, eta ihes eguin peril eta calte huni.

22 Baina orain exhortatzen çaituztét çareten bihotz onetaco, ecẽ çuetaric baten-ere galtzeric ezta içanen, vnciarenic baicen.

23 Ecen preſentatu içan da ene aitzinean gau hunetan Iaincoaren Ainguerua, *ceinena bainaiz ni, eta cein cerbitzatzen baitut,

*ceinena, Iaincoaréna.

24 Cioſtala, Paul, eztuala beldurric, Ceſari preſentatu behar atzayó: eta horrá, emã drauzquic Iaincoac hirequin vncian diraden guciac.

25 Hunetacotz bihotz on auçue, guiçonác: ecen ſinheſten dut Iaincoa, nola niri erran içan

baitzait hala içanen dela.

26 Baina cembeit iſlatara egotzi behar gara.

27 Bada hamalaurgarren gauä ethor cedinean, hara huna erabilten guenela *itſas* Adriaticoan, gauären erditſuan, eſtima ceçaten marineréc, ecen hurbiltzen litzeyela cembeit comarca.

28 Baina plomua hundarrera egotziric, eriden ceçaten hoguey braça, eta handic appurbat guibelcraturic, eta berriz plomua hundarrera egotziric, eriden ceçaten hamaborz braça.

29 Eta beldurrez leku gaitzetara eror litecen laur angura vnci guibeletic egotziric, deſiratzen çutén eguna ethor ledin.

30 Eta marinerac vncitic ihes eguin nahiz çabiltzala, batela itſaſſora erautſiric, aleguia hec angurác vnci aitzinetic hedaturen.

31 Erran ciecén Paulec Centenerari eta gendarmeſey, Baldin hauc vncian ezpadaude, çuec ecin ſalua çaitezquete.

32 Orduan gendarmeſéc ebaqui citzaten batelarẽ kordác, eta vtzi ceçatẽ beherera erortera.

33 Eta arguiaren gainera exhortatzen cituen Paulec guciac, ian leçaten, cioela, Egun haur da hamalaurgarrena, baruric beha çaudetela *eta* deus hartu eztuçuela.

34 Hunegatic exhortatzen çaituztet har deçaçuen iatera: ceren haur çuen emparatzeari appertenitzen baitzayó: ecen çuetaric baten-ere burutic bilobat ezta galduren.

35 Eta gauça hauc erranic, eta oguia harturic gratiác rẽda cietzón Iaincoari gucién aitzinean:

eta hautſiric,has cedin iaten.
36 Eta guciéc bihotz harturic,har ceçaten hecere iateco.
37 Eta baguinén arima guciác vnciá, ber-ehun *eta* hiruroguey *eta* hamaſſey.
38 Eta viandaz reſſaſiaturic, arind ceçaten vncia,ogui-bihia itſaſſora egoizten lutela.
39 Eta eguna ethorri cenean, herria etzeçaten eçagut: baina portu itſas adar çuen bati ohart cequizquión,hartara, eguin albalute,vncia egotzi aiher ciraden.
40 Eta angurác altchaturic itſaſſoari *vncia* abandonna cieçoten, gobernaillén iunctaduracere lachaturic, eta haiceari vela altchaturic, tiratzen ari ciraden coſtara.
41 Baina eroriric bi *vr* laſterrec encōtru eguiten çuten leku batetara, trebuca ceqnién vncia: eta vnci aitzinea landaturic tinc cegoen: eta vnci guibela hauſten cen baguén botherez.
42 Orduan gendarmeſén conſeillua cen preſonerén hiltzera, beldurrez cembeit igueri ſaluaturic itzur ledin.
43 Baina Centenerac Paul emparatu nahiz, harçára citzan conſeillu hartaric, eta mana ceçan igueri ahal laiditenac,bere buruäc egotziric lehenic,lurrera empara litecen:
44 Eta berceac, batzu taula gainetan, batzu vnci *çapoètan*: eta halatan eguin cedin guciac ſalburic empara baitzitecen lurrera.

CAP. XXVIII.

*3 Pauli viperabat escutic lotzen. 7 Malteco islán Publiusen aita eta bercé eriric Paulec sendatzen: 13 Eta Puzolen fideletaric batzu erideiten. 14 Paul Romara arriuatzen. 16 Haren libertatea 17 Cergatic hara eraman içan den. 23 Han Iaincoarén resumá denuntiatzen. 28 Saluamendua Gentiley igorri. 39 Bi vrthe Paul Roman egon.*

1 ETa salburic emparatu ciradenean, eçagut ceçaten orduan ecen islá Malte deitzen cela.

2 Eta Barbaroéc humanitate handi eguin cieçagutén: ecen sua vizturic recebi guençaten gu guciac, gaineancen çaicun vriagatic, eta hotzagatic.

3 Bildu çuenean bada Paulec cembeit sirmendu appur, eta eçarri cituenẽ sura, viperabat beroaren causaz ilkiric lot cequión escutic.

4 Eta ikussi vkan çutenean Barbaroéc dilindoca bestiá haren escutic, elkarri ciotsaten, Falta gabe guiçon haur guicerhaile da, cein itsassotic, emparaturic mẽdequioac ezpaitu permettitzen vici den.

5 Baina harc bestiá sura iharrossiric etzeçan minic har.

6 Eta hec beha ceuden noiz hant leiten, edo subitoqui hilic eror leiten: baina luçaqui beha egon içan ciradenean, eta çacussatenean calteric batre etzayola ethorten, proposa cambiaturic erraiten çutén, Iainco cela hura.

7 Eta ciraden leku hartan islaco principal Publio deitzẽ cenaren possessioneac, ceinec gu re-

cebituric, hirur egunez benignoqui logea baiquençan.
8 Eta guertha cedin Publioren aita baitzatzan helgaitzéc eta ſabeldarçunac çaducatela: hura baithara Paul ſar cedin, eta othoitz eguinic, eta eſcuac haren gainean eçarriric ſenda ceçan.
9 Bada haur eguin eta, iſlaco berce eritaſſunic çutenac-ere ethorten ciraden eta ſendatzen.
10 Hec-ere ohore handi eguin cieçagutén, eta embarcatzeracoã behar cenaz forni guēçaten.
11 Eta hirur hilebetheren buruän embarca guentecen Alexandriaco vnci iſlán neguä iragan çuen batetan, ceinec baitzituen enſeignatzat Caſtor eta Pollux.
12 Eta Syracuſara arriuaturic, *han* egon guentecen hirur egun.
13 Handic inguru eguinic arriua guentecen Rhegera: eta egun-baten buruän egu-erdi haicea iaiquiric, bigarren egunean ethor guentecen Puzolera:
14 Han anayeac eridenic, othoiztu içan guenén egoitera hequin çazpi egun: eta hala ethor guentecen Romara.
15 Hãdic anayeac gure berriac ençunic bidera ilki cequizquigun Appioren merkaturano, eta Hirur botiguetarano: hec ikuſſi cituenean Paulec, Iaiñcoari eſquerrac rendaturic courage har ceçan.
16 Eta ethorri içan guenenean Romara, Centenerac emã cietzón capitain generalari preſonerac: baina permetti cequión Pauli bere gain egoi-

egoitera, hura beguiratzen çuen gendarmesarequin.

17 Hirur egunen buruän dei citzã Paulec Iudu principalac: eta bildu ciradenean erran ciecén, Guiçõ anayeác, nic deus eguin ezpadut-ere populuaren contra edo aitén costumén contra, Ierusalemẽ presonér eguin içanic liuratu içan naiz Romanoén escuetara:

18 Ceinéc examinatu nẽdutenean largatu nahi vkan bainendutén, ceren heriotaco hoguenic batre nitan etzén.

19 Baina Iuduac cõtrastatzen ciradenaren gainean, ecin bercez Cesargana appellatu içã naiz: ez neure nationea cerçaz accusa deçadan dudalacotz.

20 Causa hunegatic bada deithu çaituztet, ikus cinçatedan eta minça nenguiçuençát: ecen Israeleco sperançaren causaz cadena hunez inguratua nago.

21 Eta hec erran cieçoten, Guc ez letraric recebitu diagu hiçaz Iudeatic: ez ethorriric anayetaric nehorc denuntiatu dic edo erran deus hiçaz gaizquiric.

22 Baina nahi diagu hireganic ençun cer irudi ceyán: ecen secta horrez den becembatean, baceaquiagu ecen leku gucietan nehor contrastatzen çayola.

23 Eta assignatu vkan ceraucatenean eguna, ethor citecen harengana ostatura anhitz: eta testificationerequin declaratzẽ cerauen Iaincoaren resumá, eta eracusten cerauztén Iesusez di-

raden gauçác, hambat Moyſeſen Leguetic nola Prophetetaric goicetic arratſerano.

24 Eta batzuc ſinheſten cituztén erraiten ciraden gauçác, baina bercéc etzituzten ſinheſten.

25 Eta elkarren artean accord etziradenaren gainean, parti citecen, Paulec hitz haur errã eta, Segurqui vngui Spiritu ſaindua minçatu içan çaye Eſaias prophetáz gure Aitey,

Eſa.6.9. mat 13.14 marc.4.12 luc.8.10. ioan 12.40 rom.11.8.

26 Cioela, *Habil populu horrẽgana, eta errac, Ençutez ençunen duçue eta eztuçue adituren: eta dacuſſaçuela ikuſſiren duçue eta etzaizquiote oharturen.

27 Ecen guicendu da populu hunen bihotza, eta beharriez gothorqui ençun vkan duté, eta bere beguiac ertſi vkã dituzté: beguiéz ikus, eta beharriez ençun, eta bihotzez adi eztteçatẽçát, eta conuerti eztitecen, eta ſenda eztitzadan.

28 Iaquiçue bada çuec ecẽ Gẽtiley igorri içan çayela ſaluagarri haur, eta hec ençunen dutela.

29 Eta gauça hauc erran cituenean, ilki citecen Iuduac, bere artean diſputa handi çutela.

30 Baina egon cedin Paul bi vrthe complituric bere oſtatu alocatuan: eta recebitzen cituen harengana ethorten ciraden guciac:

31 Predicatzen çuela Iaincoaren reſumá, eta iracaſtẽ cituela Ieſus Chriſt Iaunaz diradẽ gauçác, minçatzeco hardieça gucirequin, nehorc empatchuric eguin gabe.

# S· PAVL APOSTOLVAREN ROMANOETARATCO EPISTOLA.

## CAP. I.

*1 Euangelioa Apostolu içateco Paul elegitu. 3 Christ. 8 Romanoén fedea. 11, 14 Gucietara çordun Paul. 16 Euangelioa. 18 Iaincoaren hirá infidelitateaten gainean. 21 Guiçonén Iaincoagana ingrat içatea. 23 Idolatriá. 24 Iaincoaren eguiaren menospreçaçalén punitionea. 26 Iaincoaz abandonnatu içán diradenén fructuac.*

1 PAVLEC Iesus Christen cerbitzariac Apostolu içatera deithuac, *Iaincoaren Euãgelioaren *predicatzeco* bereciac.

*Act.13.1.*

2 (*Cein lehendanic bere Prophetéz Scriptura sainduetan *Iaincoac* promettatu vkan baitzuen)

*Cein, Euangelio.*

3 Bere Seme haraguiaz den becembatean Dauid-en hacitic eguinaz,

4 Sanctificationetaco Spirituaz den becembatean hiletarico resuscitatzez Iaincoaren Seme botheretsuqui declaratuaz, Iesus Christ gure Iaunaz:

5 Ceinaganic recebitu baitugu gratia eta Apostolutassuna fedea obedi dadinçát, Gẽtil guciac

baithan haren icenean:

*Ceinén, Gentilen.

6 *Ceinén artean çuec-ere deithu içan baitzarete Iesus Christgana.

7 Roman çareten guciey, Iaincoarẽ onhetsiey, saindu içatera deithuey: Gracia *dela* çuequin eta baquea gure Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ Iaunaganic.

8 Lehenic behinçát esquer draucat neure Iaincoari Iesus Christez çuen guciocgatic, ceren çuen fedea famatzen baita mundu orotan.

9 Ecen Iaincoa dut testimonio (cein cerbitzatzen baitut neure spirituan bere Semearen Euangelioan) ecen paussu gabe çueçaz memorio eguiten dudala:

1.Thess.3.10.

10 *Bethiere neure orationetan othoitz eguinez, baldin cerbait maneraz noizpait-ere bide moldezcoric eman badaquit Iaincoaren vorondatez, çuetara ethor nadin.

Ber.15.23 1.thes.2.17

11* Ecen çuen ikusteco desir handia dut, cembeit dohain spirituál parti dieçaçuedãçát, çuen confirmatzeco:

12 Erran nahi dut, çuen eta ene elkarrequilaco fedeaz consola nadinçát.

13 Eztut bada nahi ignora deçaçuen, anayeác, ecen anhitzetan çuetara ethortera deliberatu dudala (*baina empatchatu içan naiz oraindrano) cembeit fructu nuençát çuetan-ere, berce Gentiletan-ere beçala.

Ber.15.22.

14 Çordun naiz hambat Grecoetara nola Barbaroetara, hambat çuhurretara nola ignorantetara.

15 Bada, nitan den becembatean preſt naiz çuey Roman çaretenoy-ere euangelizatzera.

16 Ecen eznaiz ahalque Chriſten Euãgelioaz: ceren Iaincoaren botherea baita, ſinheſtẽ duen guciaren ſaluamendutan, Iuduaren lehenic eta guero Grecoaren.

17 Ecen Iaincoaren iuſtitiá hartan eracuſten da fedetic federa: *ſcribatua den beçala, Iuſtoa fedez vicico da.

Habac. 2.4 gal. 3.12. hebr. 10.38

18 Ecen Iaincoaren hirá claroqui eracuſten da cerutic, eguiá iniuſtitiatan daducaten guiçonén infidelitate eta iniuſtitia ororen contra:

19 Ceren Iaincoaz eçagut ahal daitena manifeſt baita hetan: ecen Iaincoac hæy manifeſtatu vkan draue.

20 Ecen haren gauça inuiſibleac (hala nola haren bothere eternala eta diuinitatea) munduaren creationetic ikuſten dirade, gauça creatu hautaric conſideratzen diradenean: excuſa gabe diradençát.

21 Ceren Iaincoa eçagutu vkan dutenarẽ gainean, ezpaitute Iainco beçala glorificatu, ez regratiatu: baina vano eguin içan dirade bere diſcurſuetan, eta hayén bihotz adimendu gabea ilhumbez bethe içan da.

22 Bere buruäc çuhur eguitẽ cituztelaric erho eguin içan dirade.

23 *Ecen cambiatu vkan duté Iainco incorruptiblearen gloriá, guiçon corruptiblearen imaginatara, eta hegaztinén, eta laur oinetaco beſtién, eta herreſtez ebilten diradenén *imagi-*

Sap. 12.24

*natara.*

24 Halacotz Iaincoac-ere abandonnatu vkan ditu hec berén bihotzetaco guthicietara, ſatſutaſſunera, bere gorputz propriey itſuſgoa eguitera elkarren ártean;

25 Nola Iaincoaren eguiá gueçurretara cambiatu vkã baitute, eta adoratu baitituzté eta cerbitzatu creaturác, vtziric Creaçalea cein baita eternalqui benedicatua, Amen.

26 Halacotz bada abandõnatu vkan ditu Iaincoac itſuſgoataco affectionetara: ecen hayén emaztec-ere cambiatu vkan duté vſança naturala natura contra denera:

27 Eta halaber arrac-ere, vtziric emaztén vſança naturala, berotu içan dirade bere guthicián bata berceagana, arrac arrarequin infamiataco gauçác eguiten cituztela, eta berac baithan recebitzen lutela bere hoguenaren recompenſa behar cen beçalacoa,

28 Eta nola ezpaituté conturic eguin Iaincoaren eçagutzetan eduquitera: *hala* abandonnatu vkan ditu Iaincoac iugemendu guciren falta den ſpiritu batetara: bide eztiraden gaucén eguitera:

29 Iniuſtitia guciaz betheac, paillardiçaz, gaichtaqueriaz, auaritiaz, malitiaz: inuidiaz betheac, guicerhaitecaz, guduz, enganioz, conditione gaichtoz:

30 Rapportari, gaitzerraile, Iaincoaren gaitzeſle, iniuriaçale, vrgulutſu, vantari, gaitz-erideile, aitamén deſobedient:

31 Adimẽdu gabe, pactoén hautsle, affectione natural gabe, appacega ecin daitezquen beçalaco, misericordia gabe.

32 Ceinéc Iaincoaren çucena eçagutu badutecere (nola halaco gauçác eguiten dituztenéc, herio mereci dutén) eztituzté eguiten solament, baina are *halacoric* eguiten dutenac fauoratzen dituzté.

CAP. II.

*1 Iaincoaren iugemẽdua hypocritén gainean. 4 Iaincoaren benignitatea. 6 Obrén arauez batbederari rendaturen. 11 Iaincoa baithan personén acceptioneric ezta. 13 Iuduac eta Gentilac cergatic reprehenditzen diraden. 17 Iuduén vrgulua. 25 Circoncisionea. 26 Preputioa.*

1 HAlacotz excusa gabe aiz o guiçoná, nor-ere baitaiz *berceac* iugeatzẽ dituana: *ecen hunez beraz ceren iugeatzẽ baituc bercea, eure buruä condemnatzẽ duc: ikussiric ecen iugeatzen ari aicenorrec, gauça bérac eguiten dituála.

*Matt. 7.1, 1.cor.4.5.*

2 Eta badaquigu ecen Iaincoaren iugemendua eguiaren araura dela halaco gauçác eguiten dituztenén gainean.

3 Eta vste duc, o guiçon halaco gauçac eguiten dituztenac iugeatzen dituaná, eta *eurorrec* hec eguiten, ecen hi itzuriren atzayola Iaincoaren

iugemenduari?

2.Pier.3.15.

4 Ala haren benignitatearen *eta patientiaren eta iguriquite lucearen abraſtaſſuna menoſpreciatzen duc: eçagutzen eztualaric ecen Iaincoaren benignitateac emendamendutara deitzen auëla?

Iacq.5.3.

5 Baina eure gogortaſſunaren eta bihotz vrriquimendu gabearen araura, *hiraz theſaur eguiten draucac eure buruäri hiraren eta Iaincoaren iugemendu iuſtoaren declarationeco egunecotzat.

Pſal.62.12 mat.16.27 apoc.22.12

6 *Ceinec rendaturen baitrauca, batbederari *ceini* bere obrén araura:

7 Hala nola, vngui eguitezco irauterequin gloria eta ohore eta immortalitate bilhatzen duteney, vicitze eternala:

8 Baina reuoltari diradeney, eta eguiari behatzen etzaizconey, baina iniuſtitia obeditzen duteney, *rendaturen çaye* indignatione eta hira.

9 Tribulatione eta herſtura gaichtaqueria eguiten duen guiçon guciaren arimaren gainera, Iuduarenera lehenic, guero Grecoarenera-ere.

10 Baina gloria eta ohore eta baque vngui eguitē duen guciari, Iuduari lehenic, guero Grecoari-ere.

Deu.10.17 2.chro.19.7. iob.34.19. ſap.6.8. eccl.35.16. act.10.34. gal.2.6. ephe.6.9. coloſſ.3.25. 1.pier.1.17

11 *Ecen ezta perſonén acceptioneric Iaincoa baithan.

12 Ecen Leguea gabe bekatu eguin duten guciac, Leguea gabe galduren-ere dirade: eta Leguean bekatu eguin duten guciac, Legueaz iugeaturen dirade.

13 (Ecen eztirade Leguea ençuten dutenac iusto Iaincoa baithan: baina Leguea eguiten dutenac iustificaturen dirade.

14 Ecen ikussiric ecen Gentilec Leguea eztutelaric, naturalqui Legueari dagozcan gauçác eguiten dituztela, hec Leguea eztutelaric, bere buruençát berac dirade Legue:

15 Ceinéc eracusten baituté Leguearen obrá scribatua bere bihotzetan, berén consciantiác halaber testimoniage rendatzen drauelaric, eta hayén pensamenduéc elkar accusatzen dutelaric, edo excusatzen-ere.)

16 Iaincoac guiçonén secretuac iugeaturen dituen egunean, ene Euangelioaren araura, Iesus Christez.

17 Huná, hi icen goiticoz deitzen aiz Iudu, eta reposatzen aiz Leguean, eta gloriatzen aiz Iainco *Jaunean*.

18 Eta eçagutzen duc *haren* vorondatea, eta badaquic contrario denaren beretzen, Legueaz instruitu içanic.

19 Eta fida aiz itsuén guidari aicela, ilhumbean *diradenén* argui,

20 Ignorantén instruiçale, haourrén iracasle, ceren baituc eçagutzearen eta eguiaren formá Leguean.

21 Hic bada bercea iracasten duanorrec, eure buruä eztuc iracasten: predicatzen baituc eztela ebatsi behar, ebaisten duc:

22 Erraiten baituc eztela adulterioric iauqui behar, adulterio iauquiten duc: idolác abomi-

nationetan baitadutzac, *eurorrec* ſacrilegio eguiten duc.

23 Eta Leguean gloriatzen baitaiz, Leguea hautſiz Iaincoa deſohoratzen duc.

24 Ecen Iaincoaren icena çuen cauſaz blaſphe matzẽ da Gentilén arteã:*ſcribatua den beçala.

*Eſa.52.5. ezech.36. 23.*

25 Ecen eguia duc, circõciſionea probetchable dela, baldin Leguea beguira badeçac: baina baldin Leguearen hautſle bahaiz, hire circonciſionea preputio bilhatzen duc.

26 Bada baldin preputioac Leguearen ordenãçác beguira baditza, haren preputioa ezta circonciſionetan eſtimaturen?

27 Eta naturaz den preputioac baldin Leguea beguira badeça, ezau iugeaturen hi, letraz eta circonciſionez Leguearen hautſle aicenor?

28 Ecen ezta hura Iudu, gainetic dena: ezeta gainetic haraguian eguiten dena circonciſione.

29 Baina hura *da* Iudu, barnetic dena: eta circonciſionea *da*, bihotzetic dena, ſpirituan ez letrán: cein *Juduren* laudorioa *ezpaitatorque* guiçonetaric baina Iaincoaganic.

## CAP. III.

*1 Iuduaren eta Gentilaren differentiá. 9, 22 Guciac bekatore. 20 Legueco obréc nehor ez iuſtificatzen. Legueac bekatua eçagut eraciten. 23 Chriſtez iuſtificatzen. 24 Bekatuén barkamendua. Fedea. 27 Fedez iuſtificatzen Leguea gabe, 28 Iaincoa Iuduén eta Gentilen Iainco.*

1 CEric da bada Iuduaren abantailla, edo ceric *da* circoncisionearen probetchua?

2 Handia manera orotara: eta gucién gainetic ceren Iaincoaren declarationeac cargutan eman baitzaizte.

3 Ecé cer *da* baldin batzuc sinhetsi ezpadute? *ala hayén incredulitateac Iaincoaren fedea ezdeusturen du?

*Berriz 9.6. 2.tim.2.13*

4 Guertha eztadila: aitzitic *biz Iaincoa eguiati, *eta guiçon gucia gueçurti, scribatua den beçala, *Eure hitzetan iusto eriden adinçát, eta hiçaz iugemendu eguiten deneã garaita duançát.

*Ioan.3.33. Psal.116.11. Psal.51.4.*

5 Eta baldin gure iniustitiác Iaincoaré iustitiá lauda eraciten badu, cer erranen dugu? ala iniusto da Iaincoa punitzen duenean? (guiçon beçala minço naiz)

6 Guertha eztadila: bercela, nola iugeaturen du Iaincoac mundua?

7 Ecen baldin Iaincoaren eguiá abundosago bada ene gueçurraz haren gloriatan, cergatic ni goitiric bekatore beçala condemnatzen naiz?

8 Eta (guçaz gaizqui minço diraden beçala, eta batzuc guc erraiten dugula dioiten beçala) ceren eztugu gaizqui eguiten, vnguia ethor dadinçát? ceinén damnationea iusto baita.

9 Cer bada? excellentago gara? Eceinere maneraz: *ecen aitzinetic raçoinac emanic eracutsi dugu, ecen guiciac hambat Iuduac nola Grecoac, bekatuaren azpian diradela.

*Gal.3.22.*

10 Scribatua den beçala, *Ezta iustoric, ezeta

*Psal.14.1. eta 53.3.*

bakoitzic.

11 Ezta aditzen duenic ezta Iaincoa bilhatzē duenic.

12 Guciac aldaratu içan dirade, eta guciac elkarrequin inutil eguin içan dirade: ezta ontaſſunic eguiten duenic, ez batetarano.

*Pſal.5.10.* 13 *Sepulchre irequibat *da* hayén eztarria: bere mihiéz enganiotara vſatu vkan duté: * ſugue aſpic-aren poçoina *da* hayén ezpainetan.

*Pſal.140.3*

*Pſal.10.7.* 14*Hayén ahoa malediɛtionez eta karmindu-raz bethea da.

*Pſal.59.* 15* Arin *dirade* hayén oinac odol iſſurtera.

16 Deſtruɛtione eta miſeria hayén bidetan.

17 Eta bide baquezcoa eztute eçagutu vkan.

*Pſal.36.1.* 18* Ezta Iaincoaren beldurra hayen beguién aitzinean.

19 Eta badaquigu ecen cerere Legueac erraiten baitu, Leguean diradeney erraiten drauela: aho gucia boça dadinçát, eta mundu gucia hoguendun dençát Iaincoaren aitzinean.

20 Hunegatic Leguearen obréz ezta iuſtificaturen haraguiric batre haren aitzinean: ecen Legueaz da bekatuaren eçagutzea.

21 Baina orain Leguea gabe Iaincoaren iuſtitiá manifeſtatu içan da, Leguearen eta Prophetén teſtimoniagea duela.

22 Bada Iaincoaren iuſtitiá, Ieſus Chriſten fedez ſinheſten duten gucietara eta gucién gainera: ecen ezta differentiaric batre: ikuſſiric ecen guciéc bekatu eguin dutela, eta Iaincoaren gloriaren falta diradela.

23 Eta iustificatzen dirade dohainic haren gratiaz, Iesus Christ *Iaunean* eguin içan den redemptioneaz:

24 Cein ordenatu baitu Iaincoac fedeazco appacegagarri haren odolean, bere iustitiaren declaratzeco, aitzineco bekatuén barkamenduagatic, Iaincoaren patientiáz:

25 *Diot* bere iustitiaren declaratzeco dembora hunetan: bera iusto dencát, eta Iesusen fedeco denaren iustificaçale.

26 Non da beraz vantationea? iraitzi içan da. Cein leguez? obrenaz? Ez: baina fedearen legueaz.

27 Concluditzen dugu beraz, fedez iustificatzen dela guiçona Leguearen obrác gabe.

28 Ala Iuduén ber *da* Iaincoa? ala ez Gentilen-ere? guerthuqui Gentilen-ere.

29 Ecen bat *da* Iaincoa, ceinec iustificaturen baitu circoncisionea fedetic, eta preputioa fedeaz.

30 Leguea bada eż deus bilhatzen dugu fedeaz? Guertha eztadila: aitzitic Leguea confirmatzen dugu.

CAP. IIII.

*3 Abraham fedez iustificatu. 4 Obrác. 5 Fedea 6 Guiçonaren dohain-ontassuna. 9 Circoncisionea. 11 Abraham, sinhesten dutenén aita. 15 Legueac hirá engendratzen. 18 Abrahamen fedea. 25 Christē herioa eta resurrectionea.*

1 CEr beraz erranen dugu gure aita Abrahamec eriden duela haraguiaren arauez?

2 Ecẽ baldin Abraham obréz iustificatu içã bada, badu cer çaz gloria dadin, baina ez Iaincoa baithan.

Genes.15.3 gal.3.6. iacq.2.23.

3 Baina cer dio Scripturác? * Sinhetsi vkan du Abrahamec Iaincoa, eta imputatu içan çayó iustitiatara.

4 Baina obratzẽ duenari alocairua etzayó gratiatan contatzen baina hartzetan:

5 Ordea obratzẽ eztuenari, baina gaichtoa iustificatzen duena baithan sinhesten duenari, bere fedea iustitiatan contatzen çayó.

6 Nola Dauidec-ere declaratzẽ baitu Iaincoac obrác gabe iustitiá imputatzen drauca guiçonaren dohain-ontassuna, *dioela*,

Psal.32.1.

7 *Dohatsu *dirade* ceinén iniquitateac quittatu içan baitirade eta ceinén bekatuac estali içan baitirade.

8 Dohatsu *da* Iaunac bekatua imputatu eztrau queon guiçona.

9 Bada dohain-ontássun haur, circoncisionean *da solament* ala *bay* preputioan-ere? Ecen erraiten dugu imputatu içan çayola Abrahami fedea iustitiatan.

10 Nola bada imputatu içan çayo? circoncisionean cela, ala preputioan? ez circoncisionean, baina preputioan.

Gen.17.11

11 *Guero recebi ceçan circoncisionearen seignalea, fedearen iustitiataco cigulutan *cein bai-

*cein fede.

tzen preputioan: preputioan diradela ſinheſten duten gucién aita licençát, hæy-ere iuſtitiá imputa lequiençát:

12 Eta circonſionearen aita, *erran nahi da*, ez circoncisionecoén ſolament, baina gure aita Abrahamen fede preputioan çuenaren hatzari darreizconen-ere.

13 Ecen promeſſa etzayó Legueaz *heldu içan* Abrahami, edo haren haciari, munduaren heredero içateco, baina fedeazco iuſtitiáz.

14 Ecen baldin Leguetic *diradenac*, heredero badirade ezdeus bilhatu da fedea, eta iraungui da promeſſa.

15 Ceré Legueac hirá engendratzē baitu: ecē non ezpaita legueric, han ezta tranſgreſſioneric

16 Harren fedez *da heretagea*, gratiaz dençát, promeſſa haci guciarē fermu dençát: ez Leguetic *den haciaren* ſolament, baina Abrahamen fedetic denaren-ere, cein baita gure gución aita,

17 (Scribatua den beçala, *Anhitz nationeren aita ordenatu vkan aut) Iaincoaren aitzinean, cein ſinhetſi vkan baitu: ceinec hiley vicitze emaiten baitraue, eta deitzen baititu eztiraden gauçác balirade beçala. *Gen.17.4.*

18 *Ceinec ſperançaren contra ſperançaz ſinhets baitzeçan, anhitz nationeren aita içanen cela: erran içan çayonaren araura, *Hala içanen duc hire hacia. *Ceinec. Abrahamec.* *Gen 15.6.*

19 Eta fedean flaccu ez içanez, etzeçan behá bere gorputz ia hilera, ehun vrtheren inguruä baçuen-ere: ezeta Sararen vmunci ia hilera.

20 Eta Iaincoaren promeſſaren gainean etzeçan duda incredulitatez: baina fortifica cedin fedez Iaincoari gloria emanic:

21 Eta frãgoqui ſeguraturic, ecen *hari* promes eguin ceraucana, botheretſu cela eguiteco-ere.

22 Halacotz *haur*-ere iuſtitiatan imputatu içan çayo.

23 Eta ezta ſcribatu içan harengatic ſolament, ecen *haur* iuſtitiatan imputatu içan çayola:

24 Baina guregatic-ere, ceini imputaturen baitzaicu, Ieſus gure Iauna hiletaric reſuſcitatu duena baithan ſinheſten dugunoy,

25 Cein *heriotara* liuratu içan baita gure bekatuacgatic, eta reſuſcitatu gure iuſtificationeagatic.

CAP. V.

1 *Fedea. Baquea.* 2 *Gratiá. Gloriá.* 4 *Patientiá. Experientiá.* 5 *Sperançá. Iaincoaren amorioa.* 12 *Adam eta Chriſt.* 14, 17 *Herioaren eta vicitzearen regnatzea.* 18 *Gure iuſtificationea.* 21 *Bekatuaren eta Gratiaren regnatzea.*

1 IVſtificaturic bada Fedez, dugu baque Iaincoa baithara Ieſus Chriſt gure Iaunaz.

2 *Ceinez are vkan baitugu ſartze haur fedez gratia hunetara, ceinetan fermu baicaude, eta gloriatzẽ baicara Iaincoaren gloriaren ſperançán.

*Epheſ.2.18*

3 Eta ez *haur* ſolament, baina are* gloriatzen gara tribulationetan, daquigularic ecen tribulationeac patientia ekarten duela.

*Iacq.1.3.*

4 Eta

4 Eta patientiác experientia, eta experientiác ſperançá.
5 Eta ſperançác eztu confunditzen, ceren Iaincoaren amorioa eraitſia baita gure bihotzetã eman içan çaicun Spiritu ſainduaz.
6 Ecen Chriſt, oraino indar gabe guinela, bere demborán infidelacgatic hil içan da.
7 Ecen miraz iuſtoagatic nehor hiltzẽ da: baina aguian norbeit ventura leite cembeit vnguieguilegatic hiltzera.
8 Baina certificatzẽ du bere charitatea gu baithara Iaincoac, cerẽ oraino bekatutara abãdonnatuac guinela, *Chriſt guregatic hil içan baita. *Heb.9.15. 1.pier.3.18*
9 Anhitzez areago beraz orain haren odolaz iuſtificaturic, harçaz ſalbu içanen gara hiratic.
10 Ecen baldin etſay guinela reconciliatu içan bagara Iaincoagana haren Semearen herioaz, anhitzez areago reconciliaturic ſaluaturen gara haren viciaz.
11 Eta ez haur ſolament baina gloriatzen-erẽ bagara Iaincoa baithan Ieſus Chriſt gure Iaunaz, ceinez orain reconciliatione recebitu baitugu.
12 Halacotz, nola guiçõ-batez bekatua mundura ſarthu içan baita, eta bekatuaz herioa: eta halaz guiçon gucietara herioa heldu içan da, ceren guciéc bekatu eguin baituté.
13 Ecen Leguerano bekatua munduan cen, baina bekatua ezta imputatzẽ legueric ezteneã
14 Baina regnatu vkan du herioac Adamganic Moyſeſganano, bekaturic eguin eztutenén gai-

nean-ere Adamen transgressionearen façoinera
Cein, Adã *cein baita ethorteco cenaren figura.

15 Baina dohaina ezta offensá beçala: ecẽ baldin baten offensáz anhitz hil içan badirade, anhitzez areago Iaincoaren gratiá, eta guiçon-batez den gratiarẽ dohaina, *cein baita* Iesus Christ anhitzetara abondatu içan da.

16 Eta ezta dohaina bekatu eguin duen batez *sarthu içan den gaucá* beçala: ecen hoguena *offensa* batetaric *sarthu içan da* condemnationetan: baina dohaina, *da* anhitz offensataric iustificationetan.

17 Ecen baldin baten offensáz herioac regnatu vkan badu, anhitzez areago iustitiazco gratiaren eta dohainaren abũdantiá recebitzen dutenéc vicitzetara regnaturen duté Iesus Christ batez.

18 Bada nola offensá batez *hoguena ethorri baita* guiçon gucietara condemnationetan: hala iustificatzen gaituen iustitia batez *ethorri da dohaina*-ere guiçon gucietara vicitzezco iustificationetan.

19 Ecen nola guiçon baten desobediẽtiáz, bekatore anhitz eguin içan baitirade, hala batẽ obedientiáz iusto anhitz eguinen dirade.

20 Eta Leguea berçalde sarthu içan da handi ledinçat offensá: baina non handitu içan baita bekatua, *han* abundosago içan da gratiá:

21 Nola regnatu baitu bekatuac heriotara, hala gratiác-ere regna leçançát iustitiaz vicitze eternaletara, Iesus Christ gure Iaunaz.

## CAP. VI.

*Bekatua ez cerbitzatzeco. 3 Baptiſmoa. 4 Reſurrectionea. Vicitzearen berritzea. 6 Guiçon çaharra. 10 Bekatuagana hiltzeco. Iaincoagana vicitzeco. 14 Bekatua. Leguea. Gratiá. 16 Obeditzen duenaren ſuiet nehor, bekatuaren edo iuſtitiaren. 21, 23 Bekatuaren gageac. Vicitze eternala.*

1 ZEr erranen dugu beraz? egonen gara bekatutá, gratiá abunda dadinçát?
2 Guertha eztadila. *Ecen* bekatuari hil içá gaizquionac, nola hartan oraino vicico gara?
3 Ala eztaquiçue ecen * Ieſus Chriſt *Iaunean* batheyatu içan garen gucioc, haren herioan batheyatu içan garela? Gal. 3. 27.
4 * Ohortze içan gara bada harequin batean Baptiſmoaz haren herioan: * nola reſuſcitatu içan baita Chriſt hiletaric Aitaren gloriaz, hala guere vicitze berritan ebil gaitecençát. Coloſ. 2. 12 1. Cor. 6. 14 eph. 4. 23. coloſ. 3. 8. 2. tim. 2. 11 heb. 12. 1. 1. pier. 2. 11
5 Ecen baldin harequin chartatuac bagara haren hiltzearen conformitatez, *haren* reſurrectionearen *conformitatez*-ere içanen gara.
6 Haur daquigularic ecen gure guiçon çaharra harequin crucificatu içan dela, deſeguin dadinçát bekatuaren gorputza, guehiagoric bekatua cerbitza ezteçagunçát.
7 Ecen hil dena libre da bekatutaric.
8 Eta baldin hil bagara Chriſtequin, ſinheſten dugu vicico-ere harequin garela:

9 Daquigularic ecen Chrift hiletaric refufcitaturic, eztela guehiagoric hiltzen, herioac eztuela haren gainean guehiago dominationeric.
10 Ecen hil içan dena, bekatuari hil içan çayó behingotz:baina vici dena, Iaincoari vici çayó.
11 Hala çuec-ere eftima eçaçue bekatuari hil çaizquiotela, baina Iaincoari vici çaizquiotela Iefus Chrift gure Iaunaz.
12 Ezteçala bada regna bekatuac çuẽ gorputz mortalean, haren guthicietan bekatua obedi deçaçuençát.
13 Eta eztietzoçuela applica çuen membroac iniquitatezco harma içateco bekatuari: baina applica ietzoçue çuen buruäc Iaincoari, hiletaric viztu anço: eta çuen membroac iuftitiataco harma *içateco* Iaincoari.
14 Ecen bekatuac eztu çuen gainean dominationeric vkanen: ecen etzarete Leguearen azpian, baina gratiaren azpian.
15 Cer bada?eguinen dugu bekatu, ceren Leguearen azpian ezgarén, baina gratiarẽ azpian? Guertha eztadila.

*Ioan.8.34. 2.pier.2.19*

16 *Ala eztaquiçue ecen noren-ere obeditzera cerbitzari iarten baitzarete, obeditzen duçuenaren cerbitzari çaretela: edo bekatuaren heriotara, edo obedientiaren iuftitiatara?
17 Bada efquer Iaincoari ceren bekatuaren cerbitzari içan baitzarete, baina bihotzetic obeditu baituçue doctrinaren formá, ceinetara eman içan baitzarete:
18 Eta bekatuaren azpitic ilkiric, iuftitiaren

cerbitzari eguin içan baitzarete.

19 Guiçonén ançora minço naiz çuen haraguiaren infirmitatearen cauſaz. Bada nola applicatu baitituçue çuen membroac cerbitzatzeco ſatſutaſſunari eta iniquitateari iniquitate *eguitera:* hala orain applicaitzaçue çuen membroac cerbitzatzeco iuſtitiari ſaindutaſſunetara

20 Ecen bekatuaren cerbitzari cineteneãn: libré cineten iuſtitiaz den becembatean.

21 Cer fructu cenduten bada orduan orain ahalque çareten gauça hetaric? ecen hayén fina, herioa *da*.

22 Baina orain bekatuaren azpitic libreturic, eta Iaincoaren cerbitzari eguinic, baduçue çuen fructua ſaindutaſſunetan: eta fina, vicitze eternala.

23 Ecen bekatuaren gageac, herioa: eta Iaincoaren dohaina *da* vicitze eternala Ieſus Chriſt gure Iaunaz.

## CAP. VII.

1 *Leguearen dominationea.* 4 *Certaco Leguearen azpitic libre eguin garen.* 6 *Spirituzco arremberritzea.* 7 *Legueaz bekatuaren eçagutzea.* 22 *Barneco guiçona.* 24 *Paulen deſira.* 25 *Adimendua. Haraguia.*

1 ALa eztaquiçue, anayeác, (ecen Leguea eçagutzen duteney minço natzaye) nola Legueac dominatione duen guiçonaren gainean vici den artean?

1 Cor. 7. 39 2 *Ecen emazte ezcondua, ſenharra vici dueno obligatua da Legueaz: baina baldin ſenharra hil badadi, libre da ſenharraren leguetic.

3 Beraz ſenharra vici deno adultera deithuren da, berce ſenhar baten *emazte* eguin badadi: baina ſenharra hil badadi legue hartaric libre da: hala non ezpaitate adultera baldin berce ſenhar baten *emazte* eguin badadi.

4 Bada, ene anayeác, çuec-ere Legueari hil çaizquiote Chriſten gorputzean: berce, hiletaric reſuſcitatu den baten çaretençát: Iaincoari fructifica dieçoguncat.

5 Ecen haraguiá guinenean, bekatuén affectione Legueaz ciradenéc indar çuten gure membroetan, herioari fructificatzeco.

6 Baina orain Leguetic libre gara, hari hil içanic ceinetan hatzamanac baiquineunden: ſpiritusco berritaſſunetan cerbitza deçaguncát, eta ez letrazco çahartaſſunetan.

7 Cer erranẽ dugu beraz? Leguea bekatu *da*? Guertha eztadila. Aitzitic bekatua eztut eçagutu vkan Legueaz baicen. Ecen eznuqueen eçagutu guthiciá baldin legueac erran ezpalu, Exo. 20. 17 Deut. 5. 21 *Eztuc guthiciaturen.

8 Baina bekatuac occaſione harturic manamẽduaz engendratu vkan du nitan guthicia gucia. Ecen Leguea gabe, hila *da* bekatua.

9 Ecen ni vici nincén Leguea gabe noizpait: baina manamendua ethorri denean, bekatua berriz vitzen haſſi içan da.

10 Eta ni hil içan naiz: eta eriden içan da vici-

tzetaco *ordenatu* ceitadan manamendua, heriotara *itzultzen* çaitadala.

11 Ecen bekatuac occasione harturic, seducitu nau manamenduaz eta harçaz hil vkan nau.

12 *Bada Legueaz den becembateã hura saindu da, eta manamendua saindu eta iusto eta on. 1.*Tim.* 1.8

13 Beraz on *den* gauçá herio eguin içan çait? Guertha eztadila: aitzitic bekatuac, bekatu *cela* aguer ledinçát, on *den* gauçáz herioa engendratu vkan draut, bekatua excessiuoqui bekatore eguin ledin manamenduaz.

14 Ecen badaquigu Leguea spiritual dela: baina ni carnal naiz, bekatuaren azpira saldua.

15 Ecen eguiten dudana, etzait on: ecen eztut cer nahi baitut, hura eguitẽ: baina ceri gaitz baitaritzat, hura eguiten dut.

16 Bada baldin cer nahi ezpaitut, hura eguiten badut, consentitzen draucat Legueari, ecen ona *dela*.

17 Bada orain guehiagoric eznaiz ni hura eguiten dudana, baina nitan habitatzẽ den bekatua.

18 Ecen badaquit eztela habitatzen nitan (erran nahi baita, ene haraguian) onic: ecen nahia bada nitan, baina onaren complitzea, eztut erideiten.

19 Ecen nahi dudan vnguia eztut eguiten: baina nahi eztudan gaizquia eguiten dut.

20 Bada baldin cer nic nahi ezpaitut hura eguiten badut, eznaiz guehiagoric ni, hura eguiten dudana, baina nitan habitatzen den bekatua.

21 Erideiten dut beraz legue haur nitan, vn-

guia eguin nahi dudanean, ecen gaizquia datchetala niri.

22 Ecen atſeguin hartzen dut Iaincoaren Leguean barneco guiçonaz den becembatean:

23 Baina badacuſſat berce leguebat neure mẽbroetan, ene adimenduco leguearen contra bataillatzen denic, eta ene membroetan den bekatuaren legueari gathibatzen nerauconic.

24 Helas guiçon miſerablea ni, norc idoquiren nau herio hunetaco gorputzetic?

25 Eſquerrac emaiten drautzat Iaincoari Ieſus Chriſt gure Iaunaz. Bada nic neurorrec adimẽduaz cerbitzatzen dut Iaincoaren Leguea, baina haraguiaz bekatuaren leguea.

CAP. VIII.

*1 Fidelen libertatea. 5 Haraguiaren affectionea eta ſpirituarena. 9 Chriſten Spiritua gutan. 15 Suiectionezco eta adoptionezco ſpiritua. 17 Iaincoaren heredero, 18 Suffrimenduac. 20 Creaturá ſuiet vanitatera. 18 Chriſt lehen ſorthua deitzen. 29 Predeſtinationea, Vocationea. Iuſtificationea. Glorificationea. 31 Chriſt guregatic liuratu. 34, 37 Deuſec ecin ſepara fidelac Chriſten amoriotic. 35 Haraquinçaco ardiac.*

1 BEraz orain ezta condemnationeric batre Ieſus Chriſtean diradenẽçát: *errã nahi da*, haraguiaren araura ebilten eztiradenẽ, baina ſpirituarẽ araura.

2 Ecen Ieſus Chriſt *Iaunean den* vicitzetaco Spirituaren Legueac libre eguin nau bekatuarẽ eta herioaren leguetic.

3 Ecen Leguearen impotentiác deus ecin çaidianean haraguian, Iaincoac igorriric bere Seme propria bekatutaco haraguiaren formán, eta bekatuagatic, condemnatu vkan du bekatua haraguian.
4 Leguearen iuſtitiá compli dadinçát gutan, haraguiaren araura ezgabiltzanotan, baina Spirituaren araura.
5 Ecen haraguiaren arauezco diradenac haraguiarẽ gaucetara dirade affectionatu: baina Spirituaren arauezcoac, Spirituaren gaucetara.
6 Eta haraguiaren affectionea, herio da: baina Spirituaren affectionea, vicitze eta baque:
7 Ceren haraguiaren affectionea etſaigoa *baita* Iaincoaren contra: ecen Iaincoaren Leguearen ezta ſuiet: eta ecin-ere daite.
8 Beraz haraguian diradenac, Iaincoari placent ecin dirateque.
9 Ordea çuec etzarete haraguian, baina Spirituan: baldin behinçát Iaincoaren Spiritua habitatzen bada çuetã: baina baldin edoceinec Chriſten Spiritua ezpadu, haina ezta haren.
10 Eta baldin Chriſt çuetan bada, gorputza behinçát hil *da* bekatuaren cauſaz: baina Spiritua *da* vicitzea iuſtitiaren cauſaz.
11 Bada baldin Ieſus hiletaric reſuſcitatu duenaren Spiritua habitatzen bada çuetan, Chriſt hiletaric reſuſcitatu duenac, viuificaturen ditu çuen gorputz mortalac-ere bere Spiritu çuetan habitatzen denaren cauſaz.
12 Halacotz bada, anayeác, çordun gara, ez ha-

raguiagana, haraguiaren araura vicitzeco, *baina Spirituagana.*

13 Ecen baldin haraguiaren araura vici baçarete, hilen çarete: baina baldin Spirituaz gorputzaren eguitateac mortificatzen badituçue, vicico çarete.

14 Ecen Iaincoaren Spirituaz gobernatzen diraden guciac, Iaincoaren haour dirade.

15 Ecen eztuçue ſuiectionetaco ſpiritubat recebitu, berriz beldurretan *içateco*: baina recebitu duçue adoptionezco ſpiritua, ceinez oihu eguiten baitugu Abba, *erran nahi baita*, Aita.

16 Spiritu hunec berac teſtificatzen du gure ſpirituarequin batean, ecen Iaincoaren haour garela.

17 Eta baldin haour *bagara*, bayeta heredero: heredero, diot, Iaincoaren, eta Chriſten herederoquide, baldin ordea *harequin* batean ſuffritzen badugu, *harequin* batean glorifica gaitecençat.

18 Ecen eſtimatzen dut dẽbora hunetaco ſuffrimenduac eztiradela comparatzeco ethorteco den gloria gutan manifeſtaturen denarequin.

19 Ecen creaturác deſir handiz beguira daude noiz Iaincoaren haourrac manifeſta daitezqueen.

20 Ecen creaturác vanitatetara ſuiet dirade, ez bere nahiz, baina ſperançaren azpian ſuiectionetan eçarri dituenaren cauſaz, hec-ere deliuraturen diradela corruptionearen ſuiectionetic,

Iaincoaren haourrén gloriaren libertatean *içateco.*

21 Ecen badaquigu creatura guciac ſuſpirioz elkarrequin daudela, eta penatá diradela oraindrano.

22 Eta ez *hec* ſolament, baina gu-ere Spirituaren primitiác ditugula, gueuroc gure baithan ſuſpirioz gaude, adoptionearen beguira gaudela,*gure gorputzaren deliurançaren *diot.* *Luc 21.28.*

23 Ecen ſperançaz ſaluatu içan gara. Eta ikuſten den ſperançá, ezta ſperança: ecen nehorc ikuſten duena,certaco ſpera leçaque?

24 Baina baldin ikuſten eztugunaz ſperança badugu,patientiaz iguriquiten dugu.

25 Eta halaber Spirituac-ere arincen ditu gure infirmitateac, ecen cerçaz othoitz eguin behar dugun bide beçala, eztaquigu: baina Spiritua bera othoiztez dago guregatic erran ecin daitezqueen ſuſpirioz.

26 Baina bihotzac examinatzen dituenac badaqui, ceric den Spirituaren affectionea: ecen Iaincoaren araura othoitz eguiten du ſainduacgatic.

27 Badaquigu halaber ecen Iaincoari on daritzoteney gauça guciac elkarrequin aiutatzen çaiztela onetara,*iaquiteco da,* haren ordenançaren araura deithu diradeney.

28 Ecen lehenetic cein eçagutu baititu *hec* predeſtinatu-ere ditu bere Semearen imaginaren conforme içateco, hura dençát lehen iayoa anhitz anayeren artean.

29 Eta cein predestinatu baititu, hec deithu-ere ditu : eta cein deithu baititu, hec iustificatu-ere ditu:eta cein iustificatu baititu hec glorificatu-ere ditu.

30 Cer bada erranen dugu gauça hautara?Baldin Iaincoa gure alde bada, nor *içanen da* gure contra?

31 Ceinec bere Seme propria ezpaitu guppida vkan,baina gure guciongatic eman vkan baitu, nola eztrauzquigu gauça guciac-ere harequin emanen?

32 Norc produituren du accusationeric Iaincoaren elegituén cōtra? Iaincoa *da* iustificatzen duena.

33 Nor da condemnaturen duena? Christ *da* hil içā dena,baina are resuscitatu-ere dena: Iaincoarē escuinean-ere dena,eta guregatic othoitz eguiten duena.

34 Norc separaturen gaitu gu Christen amoriotic?*ala* tribulationec, ala hersturac, ala persecutionec,ala gossetec,ala billuci içatec, ala perilec,ala ezpatac?

*Psal.44.22* 35 Scribatua den beçala, *Hire causaz hiltzen gaituc egun oroz : estimatu içan gaituc haraquinçaco ardién pare.

36 Baina gauça hautan guciotā victorioso bainoago gara,gu onhetsi gaituenaren partez.

37 Ecen segur naiz ecen ez herioc, ez vicitzec, ez Aingueruëc, ez principaltassunéc, ez bothercéc,ez presenteco gaucéc,ez ethortecoéc:

38 Ez goratassunec, ez barnatassunec,ez berce

creaturac batec-ere ecin ſeparaturen gaituela Iaincoaren amorio Ieſus Chriſt gure Iaunean ekarri draucunetic.

## CAP. IX.

*2 Paulen Iuduetaratco affectionea. 5 Chriſt Iainco. 8 Promeſſaren haourrac. 10 Iaincoaren electionea. 15, 18 Iaincoac nahi duenari miſericordia eguiten eta nahi duena gogortzen. 22 Hirazco eta miſericordiazco vnciac. 24 Gentilac deithu. 27 Iuduetaric ſaluatzen diradenac guti.*

1 EGuia diot Chriſteã, eztiot guecurric, neure conſcientiác halaber teſtificatzen drautalaric Spiritu ſainduaz,

2 Ecen triſtitia handia, eta tormenta ardurazcoa dudala neure bihotzean.

3 Ecen deſir nuque ni neuror Chriſtganic ſeparatua nincén neure anayeacgatic, cein baitirade ene ahaide haraguiaren arauez:

4 Cein baitirade Iſraeltár: ceinena *baita* adoptionea, *eta gloriá, *eta alliançác, eta Leguearen ordenançá, eta cerbitzu diuinoa eta promeſſac:

Leben 2.15 Ephe.2.12.

5 Ceinenac *baitirade* Aitác, eta hetaric da Chriſt haraguiaren arauez, cein baita gauça gucién gaineco Iainco, eternalqui benedicatua. Amen.

6 *Badaric-ere ecin date Iaincoaren hitza erori den: ecen eztirade Iſraeleco *diraden* guciac, Iſrael.

Leben 2.28

7 Eta ceren Abrahamen haci *diraden* eztiradé *halacotz* guciac haour, baina *Isaactan haci deithuren çaic hiri.

Gen. 12.12 hebr. 11. 18

8 Erran nahi da, eztiradela haraguiaren haour diradenac, *halacotz* Iaincoáren haour: *baina promessaren haour *diradenac* estimatzen diradela hacitan.

Gal. 4. 18.

Gen. 18. 10 9 Ecen promessaren hitza haur da, *Dembora hunetan ethorriren naiz, eta Sarac vkanen du semebat.

Gen. 25. 20 10 Eta ez *haur* solament, *baina Rebeccac-ere batganic concebitu çuenean, *baitzén*, gure aita Isaacganic.

11 Ecen oraino haourrac sorthu gabe, eta *hec* vnguiric ez gaizquiric eguin gabe (Iaincoaren ordenançá electionearen araura legoençát,

12 Ez obrén baina deitzen duenaren partez) erran içan çayon hari, *Guehienac cerbitzaturen din chipiena.

Gen. 25. 22

Malac. 1. 2 13 Scribatua den beçala, *Iacob onhetsi dut eta Esau gaitzetsi.

14 Cer beraz erranen dugu? Alá da iniustitiaric Iaincoa baithan? Guertha eztadila.

Exod. 9. 16 15 Ecen Moysesi erraiten drauca, *Pietate vkanen diát pietate eguin nahi vkanen draucadanaz, eta misericordia eguinen diarocat misericordia eguin nahi vkanen draucadanari.

16 Halacotz beraz *electionea* ezta nahi duenaren, ez laster eguiten duenaren, baina Iainco misericordia eguiten duenaren.

Exod. 9. 16. 17 Ecen badiotsa Scripturác Pharaori, *Hune-

tacotz ber suscitatu aut, eracuts deçadançát hitan neure botherea, eta denuntia dadinçát ene icena lur gucian.

18 Beraz nahi duenari misericordia eguiten drauca, eta nahi duena gogortzen du.

19 Erranen drautac bada niri, Cergatic oraino arranguratzen da? ecen nor da haren vorondateari resisti ahal dieçaqueona?

20 Bainaitzitic, o guiçoná, hi nor aiz Iaincoaren cõtra replicatzen duana? *Ala erranen draucа gauça moldatuac hura moldatu duenari, Cergatic hunelaco eguin nauc?

*Esa.45.9.*

21 *Ala eztu lur-tupinaguileac orhe ber batetaric eguiteco bothere, vnci bataren ohoretaco, eta bercearen desohoretaco?

*Sap.15.7. hiere.18.6.*

22 Eta *cer da*, baldin eracutsi nahiz Iaincoac hirá, eta eçagut eraci nahiz bere botherea, suffritu baditu patientia hãditan hirazco vnci galtzecotzat apprestatuac?

23 Eta bere gloriazco abrastassunén eçagut eraciteco misericordiazco vnci gloriataco apprestatu dituenetara?

24 Cein deithu-ere baititu *diot* gu, ez solament Iuduetaric, baina Gentiletaric-ere.

25 Nola Osea baithan-ere erraitẽ baitu, *Deithuren dut ene populu etzena, neure populu: eta *niçaz* onhetsi etzena, *neure* onhetsi.

*Ose.2.23. 1.Pier.2.10*

26 Eta içanen da, erran içan çayen lekuan, *Etzarete ene populu çuec, han deithuren baitirade Iainco viciaren haour.

*Ose.1.10.*

27 Esaias-ere oihuz dago Israelen gainean, *Is-

*Esa.10.22.*

taeleco haourrén contua itſaſſoco ſablea beçala licen orduan, reſtançác dirade ſaluaturen.

28 Ecen *Iaunac* acabatzen eta laburtzen du beharquia iuſtitiarequin: ceren beharqui laburtubat eguinen baitu Iaunac lurraren gainean.

*Eſa.1.9.* 29 Eta lehen Eſaiaſec erran çuen beçala, *Baldin armadén Iaunac vtzi ezpaleraucu hacia, Sodoma beçalacatu guinatequeen, eta Gomorrha irudi vkan guenduqueen.

30 Cer beraz erranen dugu? Ecen Gentil iuſtitiari etzarreitzanéc, iuſtitia ardietſi vkan dutela: etare iuſtitia fedezcoa:

31 Baina Iſrael, iuſtitiazco Legueari çarreicalaric, iuſtitiazco Leguera eztela heldu içan.

32 Cergatic? cerẽ ezpaita *haur içan* fedez, baina Legueco obréz beçala: ecẽ behaztopatu içan dirade behaztopagarrico harrian.

*Pſal.118. 20. eſa.8.14. eta 28.16. 1.pier. 2.6.* 33 Scribatua den beçala, *Huná, eçarten dut Sionẽ behaztopagarrico harria, eta trebucagarrico harria: eta nor-ere baita hura baithan ſinheſten duena, ezta confus içanen.

## CAP. X.

*1 Scientia gaberico zeloa. 3 Iaincoarẽ iuſtitiá eta guiçonena. 4 Leguearen fina Chriſt. 5 Leguezco eta fedezco iuſtitiá. 14 Inuocatzea. Sinheſtea. Ençutea. Predicatzea. 15 Hitzaren miniſtreac. 17 Fedea ençutetic, eta ençutea Iaincoaren hitzetic.*

Ana-

1 ANayeác, ene bihotzeco affe-ctione ona eta Iaincoagana Israelgatic eguiten dudan othoitzá da salua ditecen.

2 Ecen testimoniage ekarten drauet, nola Iaincoaren zeloa badutén, baina ez scientiaren araura.

3 Ecen Iaincoaren iustitiá eçagutzen eztutelaric, eta bere iustitia fundatu nahiz dabiltzalaric, Iaincoaren iustitiari etzaizca susmettitu.

4 *Ecen Leguearen fina Christ *da*, sinhesten duen guciaren iustitiatan. Gal.3.24.

5 Ecen Moysesec-*ere* scribatzen du Leguetic den iustitiáz, *Ecen gauça hec eguinen dituen guiçona, heçaz vicico dela. Leuit.18.5 ezec.20.11 gal.3.11.

6 Baina fedez den iustitiác, hunela erraiten du, *Ezterrála eure bihotzean, Nor iganen da cerura? hori duc Christen garaitic erekartea. Deu.30.14

7 Edo, nor iautsiré da abysmera? hori duc Christen hiletaric harçara erekartea.

8 Baina cer erraiten du? *Hire hurbil duc hitza hire ahoan eta hire bihotzean. Haur da fedeazco hitz predicatzen duguna. Deu.30.14

9 Ecen baldin confessa badeçac eure ahoz Iesus Iauna, eta eure bihotzean sinhets badeçac, ecen Iaincoac hura hiletaric resuscitatu duela, saluaturen aiz.

10 Ecen bihotzez sinhesten da iustificatu içateco, eta ahoz cófessione eguité saluatu içateco.

11 Ecen erraiten du Scripturác, *Nor-ere *baita* hura baithan sinhesté duena, ezta cófus içanen. Esa.28.16.

12 Ecen ezta differentiaric Iuduaren eta Grecoaren artean: ecen gucién Iaun bera da abrats, hura inuocatzen duten gucietara.

Ioel 2.32. act.2.21. 13 *Ecen norere *baita* Iaunaren icena inuocaturen duena, saluaturen da.

14 Nolatan bada inuocaturen duté hura baithan sinhetsi vkan eztutenéc: eta nolatan sinhetsiren duté harçaz ençun vkan eztutenéc? eta nolatan ençunen duté predicaçaleric gabe?

Esa.52.7. nahum.1.15. 15 Eta nolatan predicaturen duté baldin igor ezpaditez? scribatua den beçala, *O cein eder diraden baquea euangelizatzen dutenén oinac, gauça onac euangelizatzen dituztenenac!

Esa.53.1. ioan 12.38 16 Baina guciac etzaizquio behatu içan Euangelioari, ecen Esaiasec erraiten du, *Iauna, norc sinhetsi du gure predicationea?

17 Beraz fedea ençutetic *da*: eta ençutea Iaincoaren hitzaz.

Psal.19.5. 18 Baina galdez nago, ala eztute ençun vkan? *Bainaitzitic lur orotara ilki içã da hayẽ soinuã, eta munduaren bazterretarano hayén hitzac.

Deu.32.21 19 Baina galdez nago, ala Israelec eztu *Iaincoa* eçagutu vkan? Lehenic Moysesec erraiten du, *Nic ielosgoatara prouocaturen çaituztét gendegende-eztenaz, gende adimendu gabe batez asserre eraciren çaituztét.

Esa.65.1. 20 Eta Esaiasec hardieça hartzen du, eta erraiten, *Eriden içan naiz bilhatzen eznindutenéz, eta claroqui aguertu içan natzaye ene galderic eguiten etzutenеy.

21 Baina Israelez den becembatean erraiten

du, *Egun gucian hedatu vkan ditut neure esٰ- cuac populu desobedientagana eta cōtrastatzen denagana. *Esa.62.2.*

CAP. XI.

*2 Iudu guciac ez iraitzi. 5 Gratiá. 6 Obrác. 7 Electionéa. 8 Itsutassuna. 11 Iuduén erortea, Gentilén saluamendu. 15 Iuduén iraiztea. 22 Iaincoaren benignitatea eta seueritatea. 25 Iuduén itsutassuna, Gentilén complimendu. 29 Iaincoaren dohainac eta vocationea. 32 Ertsi guciac desobedientiatan.*

1 GAldez nago bada, Ala iraitzi vkan du Iaincoac bere populua? Guertha eztadila: ecē niere Israeltár naiz, Abrahamē hacitic, Beniaminen leinutic.

2 Eztu iraitzi Iaincoac bere populu lehenetic eçagutua. Ala eztaquiçue Eliasez cer erraiten duen Scripturác? nola requesta eguiten draucan Iaincoari Israelen contra, dioela,

3 *Iauna hire Prophetác hil citié, eta hire aldareac deseguin citié, eta ni azquendu içan nauc neuror, eta ene arimaren ondoan diabiltzác. *1.Reg.19. 10.*

4 Baina cer diotsa hari reposta diuinoac? *Reseruatu citiát neurorrēdaco çazpi milla guiçon belhaunic Baalen *imaginari* plegatu eztraucatenic. *1.Reg.19. 18.*

5 *Hala* bada dēbora hunetan-ere, reseruatione gratiazco electionearen arauez eguin içan da.

6 Eta baldin gratiaz, ez guehiagoric obréz: bercela gratiá guehiagoric ezta gratia: baina baldin obréz *bada*, guehiagoric ezta gratia: ber-

cela obrá guehiagoric ezta obra.

7 Cer beraz? Bilhatzen çuena Iſraelec eztu ardietſi:eta electioneac ardietſi vkan du, eta goiticoac gogortu içan dirade,

*Eſa.29.10. eta 6.9. mat.13.14 ioan 12.40 act.28.26.*

8 Scribatua den beçala, *Eman vkan draue Iaincoac ſpiritu ithobat: *eta* begui,ikus ezteçatençát:eta beharri,ençun ezteçatençát egungo egunerano.

*Pſal.62.22*

9 Eta Dauid-ec erraiten du, *Berén mahaina arte bilha bequié, eta laço eta trebucamendu, eta *haur* pagamendutan.

10 Ilhun bitez hayén beguiac, ikus ezteçatençát: eta hayén bizcarra bethiere makur eçac.

11 Galdez nago bada, ala trebucatu içan dirade eror litecēçat? Guertha eztadila: baina hayén erorteaz ſaluamendua Gentiletara *ethorri içan da*, hæy iarreiquitera incitatzeco.

12 Eta baldin hayén erortea munduaren abraſtaſſun bada, eta hayén diminutionea Gentilén abraſtaſſun : cembatez areago hayén abundantia?

13 Ecen çuey Gentiloy diotſuet, ni Gentilén Apoſtolu naicen becembatean, neure miniſterioa ohoratzen dut:

14 Eya nolazpait neure ahaideac ielos eraci ahal ditzaquedanez,eta hetaric batzu ſalua.

15 Ecen baldin hayén iraiztea munduaren reconciliatione bada,ceric *içanen da* receptionea, hiletaric vicitze baicen?

16 Eta baldin primitiác ſaindu badirade,bayeta orhea: eta baldin erroa ſaindu *bada*, bayeta adarrac.

17 Eta baldin adarretaric batzu hautsi içan badirade, eta hi bassa oliua incelaric, charthatu içan bahaiz hayén orde, eta oliua erroan eta vrinean participant eguin bahaiz,

18 Ezadila gloria adarrén contra: eta baldin gloriatzen bahaiz, eztuc hic erroa egarten, baina erroac hi.

19 Erranen duc bada, Hautsi içan dirade adarrac, ni chartha nendinçát.

20 Vngui: hec infidelitatez hautsi içan dituc, eta hi fedez çutic ago: ezadila vrguluz hant, baina aicén beldur.

21 Ecen baldin Iaincoac adar naturalac guppida vkan ezpaditu, *beguirauc* hi-ere guppida ezauën.

22 Ikussac beraz Iaincoaren benignitatea eta seueritatea: trebucatuetara, seueritatea: eta hiregana, benignitatea, baldin perseuera badeçac benignitatean: ezpere hi-ere ebaquiren aiz.

23 Eta hec-ere baldin perseuera ezpadeçate infidelitatean, charthaturen dituc, ecen Iaincoa botheretsu duc harçara hayén charthatzeco.

24 Ecen baldin hi naturaz bassa cen oliuatic ebaqui içan bahaiz, eta natura contra oliua onean charthatu bahaiz: cembatez areago natural diradenac charthaturen dirade bere oliua proprian?

25 Ecen eztut nahi ignora deçaçuen, anayeác, secretu haur, (ceuroc baithan arrogant etzaretençat) ecen gogortassuna parte Israeli ethorri içan çayola, Gentilén complimẽdua sar leiteno.

26 Eta hala Israel gucia saluaturen da, scribatua

*Esa.59.20.* den beçala, *Ethorriren da Siondic liberaçalea, eta aldaraturen ditu infidelitateac Iacobganic.

27 Eta alliança haur eneganic vkanen duté,
*Esa.27.9.* *Kendu dituquedanean hayén bekatuac.

28 Euangelioaz den becembatean, bay etſay *dirade* çuen cauſaz, baina electioneaz den becembatean, onhetſiac, Aitén cauſaz.

29 Ecen dolu gabe dirade Iaincoaren dohainac eta vocationea.

30 Ecen nola çuec-ere noizpait Iaincoagana deſobedient içan baitzarete: baina orain miſericordia ardietſi baituçue hayén deſobedient içanez:

31 Hala hauc-ere orain eztuté obeditu vkan, çuey eguin çaiçuen miſericordiaz hauc-ere miſericordia ardiets deçatençát.

32 Ecen Iaincoac ertſi vkan ditu guciac deſobedientiatan, guciey miſericordia leguiençát.

33 O Iaincoaren ſapientiaren eta eçagutzearen abraſtaſſunen barná! ala haren iugemenduac baitirade comprehendi ecin daitezqueen beçalacoac, eta haren bideac erideiteco impoſſibleac!

*Esa.40.13. iob.41.2. 1.cor.2.16.* 34 *Ecen norc eçagutu vkan du Iaunaren gogoa? edo nor içan da haren conſeillari?

35 Edo norc lehenic eman drauça hari, eta rendaturen baitzayo?

36 Ecen harenganic, eta harçaz, eta harengatic *dirade* gauça guciac: hari gloria ſeculacotz. Amen.

## CAP. XII.

*1 Iaincoaganaco offrendá. 3 Sobrequi iaquitera presumitzeco. 4 Christinoac gorputzbat. 6 Dohainac different. 9 Dilectionea. 10 Christinoaren eguimbidea.*

1 OThoitz eguiten drauçuet bada, anayeác, Iaincoaren misericordién partez, offrenda ditzaçuē çuen gorputzac sacrificio vicitan, saindutan, Iaincoaren gogaracotan, *cein baita* çuen cerbitzu raçoinezcoa.

2 Eta etzaquitzotela conforma mundu huni, baina trāsforma çaiteztez çuen adimenduaren arramberritzez, *phoroga deçaçuençát ceric den Iaincoaren vorondate ona eta placenta eta perfectoa.

Ephe.5.17. 1.thess.4.3.

3 Ecen niri eman içan çaitadan gratiáz, erraiten drauçat çuen artecoetaric batbederari, ezteçan presumi iaquitera iaquin behar den baino guehiago, baina den çuhur sobrietatera: *Iaincoac batbederari fédearē neurria repartitu drauçan beçalá.

1.Cor.12.6 ephe.4.7.

4 Ecen nola gorputz batetan anhitz membro baitugu, eta membro guciéc ezpaitute operationebat bera:

5 Hala anhitz *garelaric* gorputzbat gara Christ baithā eta batbedera *gara* bata bercearē membro.

6 *Eta ditugula dohain diuersac, emā içan çaicun gratiarē araura, edo prophetia, *deçagun prophetiza* fedearen proportionearen arauez:

1.Pier.4.10

7 Edo ministerio,*garen* administrationean:edo iracasten ari dena,*den* instructione *emaile*.

8 Edo exhortatzen ari denac, exhorta deçan: *distribuitzen ari denac,*distribui deçan* simplicitatetan:presiditzen duenac *daguian* diligentqui: misericordia eguiten duenac, *daguian* aleguer-aqui.

*Matt.6.2.* *2.cor.9.7.*

9 Charitatea *den* fictione gabe: *çareten* *gaitzaren gaitzetsle,vnguiari eratchequiac.

*Amos 5.15*

10 *Anayetassunezco charitatez elkarren onhestera emanac: elkarri ohoratzera aitzincen çaitzatela.

*Ephe.4.2.* *1.pier.1.22* *eta 2.17.*

11 *Cerbitzu eguitera ez nagui, spirituz ardént,Iauna cerbitzatzen duçuela.

*1.Pier.5.5.*

12 Sperançaz aleguera çaretelaric, tribulationean patiẽt,*orationean perseueratzen duçuela.

*Luc 18.1.*

13 *Sainduén necessitatetara communicatzen duçuela:*hospitalitateari iarreiquitẽ çaitzatela.

*1.Cor.16.1* *Hebr.13.2.*

14 *Benedicaitzaçue çuec persecutatzen çaituztenac:benedicaitzaçue,*diot*,eta ez maradica.

*1 pier.4.9.* *Matt.5.44*

15 Aleguera çaitezte aleguera diradenequin, eta nigar eguiçue nigarrez daudenequin.

16 Gogo batez bata berceagana affectionatuac çaretelaric: *gauça gorác affectatzen eztituçuelaric, baina beheretara accommodatzen çaretelaric.Etzaretela çuhur ceuroc baithan.

*Prou.3.7.*

17 *Ezteçoçuela nehori gaitza gaitzagatic renda. *Procuraitzaçue gauça honestac guiçon gucién aitzinean.

*Pro.20.22* *matt.5.39* *1.pier.3.9.* *2.Cor.8.21*

18 *Eguin albadadi,çuetan den becembatean, guiçon guciequin baquea duçuen.

*Heb.12.14*

19 *Etzaiteztela ceuroc mendeca, *ene* maiteác, baina leku emoçue hirari: ecẽ ſcribatua da, *Niri mendequioa: nic dut rendaturen, dio Iaunac.

*Eccl.28.1.*
*Deu.32.35.*
*heb.10.30.*

20 *Bada baldin goſſe bada hire etſaya, emóc iatera: baldin egarri bada, emóc edatera: ecen hala eguiten duála ſuco ikatzac bere buru gainera bilduren drautzac.

*Pro.25.22*

21 Ezadila gaizquiaz garait, baina garait eçac vnguiaz gaizquia.

## CAP. XIII.

1 *Magiſtratuaganaco obedientiá. 6 Tributaren pagatzea. 8, 10 Leguearen complimendua, charitatea. 11 Saluamendua hurbil. 12 Ilhumbearen obrác. Arguiari dagozcan abillamenduác. 14 Chriſtez veztitzeco.*

1 *PErſona guçia poteſtate goragoén ſuiet biz, ecen ezta poteſtateric Iaincoaganic baicen: eta diraden poteſtateac, Iaincoaz ordenatuac dirade.

*Sap.6.4.*
*tit.3.1.*
*1.pier.2.13*

2 Halaçotz, poteſtateari reſiſtitzen draucanac, Iaincoaren ordenançari reſiſtitzen drauca: eta reſiſtitzen dutenéc, bere buruén gainera damnatione erekarriren duté.

3 Ecen magiſtratuac eztirade icigarri, obra onacgatic, baina gaichtoagatic. Bada nahi duc poteſtatearen beldur ez içan? eguic vngui, eta recebituren duc laudorio harenganic.

4 Ecen Iaincoaren cerbitzari duc hire onetacotz: baina gaizquiric badaguic, aicén beldur: e-

cen eztic causa gabe ezpatá ekarten: ecen Iaincoaren cerbitzari duc, mendecari hiratan, gaizqui eguiten duenaren gainean.

5 Harren behar da içã ſuiect ez hiragatic ſolament, baina conſcientiagatic-ere.

6 Ecen halacotz tributac-ere pagatzen dituçue: ecen Iaincoaren miniſtre dirade, hunetara berera emplegatzen diradela.

*Mat 22.21* 7 *Renda ieceçue bada guciey çor draueçuena: nori tributa, tributa: nori peagea, peagea: nori beldurra, beldurra: nori ohorea, ohorea.

8 Etzaretela nehorengana deuſez çordun: elkarri on daritzoçuen baicen: ecen berceri on daritzanac, Leguea complitu du.

*Exo.20.14 deut.5.16.* 9 Ecen haur, *Ezaiz adultero içanẽ, Eztuc hilen, Eztuc ebatſiren, Eztuc falſu teſtimoniageric erranen, Eztuc guthiciaturen: eta baldin cembeit berce manamenduric *bada*, hitz hunetan ſommarioqui comprehenditzẽ da, *Onhetſiren duc eure hurcoa eure buruä beçala.

*Leui.19.18 mat.22.39 marc12.31 gal.5.14. iacq.2.8.* 10 Charitateac hurcoari gaizquiric eztrauca eguiten. Beraz *Legueare complimendua, charitatea *da*.

*1.Tim.1.5*

11 Principalqui ikuſſiric ſaſoina, ecen ia ordu dela lotaric iratzar gaitecẽ: ecẽ orain hurbilago daucu ſaluamẽdua, ecẽ ez ſinhetſi vkã duguneã.

12 Gauä iragan da eta eguna hurbildu. Iraitz ditzagun bada ilhumbearẽ obrác, eta vezti gaitecen arguiari dagocan abillamenduz.

*Luc 21.34* 13 Egunáz ançò honeſtqui ebil gaitecen: *ez gormandicetan eta hordiquerietan, ez ohatze-

tan eta insolentietan, ez gudutan eta inuidiatan.

14 * Baina vezti çaiteztez Iesus Christ Iaunaz, eta haraguiaz artharic eztuçuela *harẽ* guthicién complitzeco. Gal.5.16. 1.pier.2.11

CAP. XIIII.

*1 Fedean infirmo diradenéz. 8 Iaunari hiltzea edo vicitzea. 10 Nehor ez iudicatzeco. 20 Viandagatico scandaloa. 23 Fedetic eztena bekatu.*

1 ETa fedez infirmo dena recebi eçaçue, *baina* ez disputationez ihardúquitera.

2 Batac sinhesten du gauça gucietaric ian ahal deçaquela: eta berce infirmo denac belhar iaten du.

3 Iaten duenac, iaten eztuena ezteçan menosprecia: eta iaten eztuenac, iaten duena ezteçan iudica. Ecẽ Iaincoac hura bere recebitu vkã du.

4 *Hi nor aiz berceren cerbitzaria iudicatzen duana? bere Iaunari fermu egoiten edo erorten ciayóc: baina fermaturen dic: ecen botheretsu duc Iaincoa haren fermatzeco. Iacq.4.12.

5 Batac estimatzen du egun bata bercea bainoago, eta berceac estimatzen du *bardin* cein egun nahi den: batbedera biz segur bere conscientián.

6 Egunera behatzen duenac, Iaunagana behatzen du: eta egunera behatzẽ eztuenac, Iaunagana eztu behatzẽ. Iaten duenac, Iaunari iatẽ du: ecen regratiatzen du Iaincoa: eta iaten eztuenac, Iaunari eztu iaten, eta regratiatzen du Iaincoa.

7 Ecen ezta gutaric nehor bere buruäri vici, eta ezta nehor bere buruäri hiltzen.

8 Ecen edo dela vici garén, Iaunari vici gara: edo dela hiltzen garén, Iaunari hiltzen gara. Beraz nahi bada vici garén, nahi bada hiltzen garén, Iaunaren gara

9 Ecen hunetacotz át Chriſt hil, eta reſuſcitatu, eta vicitara itzuli içan da, hambat hilén nola vicién gainean dominatione duençát.

10 Baina hic cergatic iudicatzen duc eure anayea? edo hic-ere cergatic menoſpreciatzen duc eure anayea? * Ecen guciac comparituren gara Chriſten iudicioco throno aitzinean.

2.Cor.5 10

11 Ecen ſcribatua da, *Vici naiz ni, dio Iaunac, ecen niri gurthuren çait belhaun gucia: eta mihi oroc laudorio emanen drauca Iaincoari.

Eſa.45.23. philip.2. 10

12 Bada ſegur gutaric batbederac bere buruaz contu rendaturen drauca Iaincoari.

13 Ezteçagula beraz guehiagoric elkar iudica, bainaitzitic hunetan iugemenduz vſat eçaçue, behaztopagarriric batre edo trebucagarriric *çuen* anayeri eçar ezteçoçuen.

14 Badaquit, eta ſegur naiz Ieſus Iaunaren partez, eztela deus ſatſuric bere berez: ſalbu, cerbait ſatſu dela eſtimatzen duenaren, *hura* harendaco ſatſu baita.

15 Baina baldin viandagatic hire anayea triſtetzen bada, ezabila ia charitatearen araura: *ezte çála eure viandagatic hura gal, ceinagatic Chriſt hil içan baita.

1.Cor.8.11

16 Eztadila beraz çuen vnguia gaitz erran.

17 Ecen Iaincoaren resumá ezta ianhari ez edari: baina iustitia eta baque eta bozcario Spiritu sainduaz.

18 Ecen gauça hautan Christ cerbitzatzen duena, Iaincoaren gogaraco da, eta laudatua da guiçonéz.

19 Iarreiqui gaquiztén beraz baqueari dagozcan gaucey, eta elkarren edificationetaco diradeney.

20 Ezteçála *hic* viandaren causaz Iaunaren obra deseguin: eguia duc* gauça guciac chahu *diradela*, baina gaizquia *duc* scandalorequin iaten duen guiçonaren. Tit.1.15.

21 *On duc haraguiric ez iatea, eta mahatsarnoric ez edatea, eta hire anaye behaztopatzen edo scandalizatzen, edo infirmo eguiten den gauçaren ez eguitea. 1 Cor.8.13.

22 Hic fede duc? auc euror baithan Iaincoaren aitzinean. Dohatsu *da* bere buruä iudicatzen eztuena laudatzen duen *gauçán*.

23 Baina scrupulo eguiten duena, baldin ian badeça, iudicatua da: ecen eztu fedez *iaten*: eta fedetic eztén gucia bekatu da.

## CAP. XV.

1 *Infirmoén flaccatassunac supportatzeco.* 7 *Elkarrecebitzeco.* 8 *Promessac confirmatu.* 9 *Misericordia Gentiley.* 16 *Paul hayén ministre.* 26 *Macedoniacoén eta Achaiacoén contributionea.* 27 *On spiritualac eta carnalac.* 33 *Baquezco Iaincoa.*

1 ETa behar ditugu fermu garenóc, infirmoén flaccatassunac supportatu, eta ez gure buruey complacitu.

2 *Bada* gutaric batbederac cõplaci beça bere hurcoa vnguira edificationetan.

3 Ecen Christec-ere eztu bere buruä complacitu nahi vkan, baina, scribatua den beçala, *Hiri iniuria erraiten drauëanén iniuriác ene gainera erori içan dituc.

Psal.69.10

4 Ecen aitzinetic scribatu diraden gauça guciac, gure doctrinatan scribatu içan dirade, Scripturetaco patientiaz eta consolationez sperança dugunçát.

5 Bada patientiataco eta consolationetaco Iaincoac *diçuela elkarren artean gauça ber baten pensatzeco *gratia* Iesus Christen araura:

1.Cor.1.10

6 Gogo batez eta aho batez glorifica deçaçuençát Iaincoa, cein baita Iesus Christ gure Iaunaren Aita.

7 Halacotz recebi eçaçue elkar, Christec-ere gu recebitu gaituen beçala Iaincoaré gloriatan.

8 Bada erraiten dut, Iesus Christ circonsioneare ministre içan dela, Iaincoaren eguiagatic, Aitey *eguin çaizten* promessác confirma litzançát:

9 Eta Gentilée Iaincoa *bere* misericordiagatic glorifica deçaten: scribatua den beçala, *Halacotz laudorio emanen drauat hiri Gentilén artean, eta hire icenari cantaturen diarocát.

2.Reg.22.50.

10 Eta berriz *dio*, * Aleguera çaiteztez Gentilác haren populuarequin. Psal.18.50

11 Eta berriz, * Lauda eçaçue Iauna Gentil guciéc eta elkarrequin lauda eçaçue hura populu guciéc. Deut.32.45.

12 Eta berriz Esaiasec erraiten du, * Içanen da Iesserenic çain-bat, eta, Gentilén gobernatzera altchaturen den-bat: Gentiléc hartan sperança vkanen duté. Esa.11.10.

13 Sperãçazco Iaincoac bada compli çaitzatela bozcario guciaz eta baquez sinhetsiz, sperançaz abundos çaretençát Spiritu sainduaren verthutez.

24 Bada segur naiz, ene anayeác, ni neuror-ere çueçaz, ecen çuec cueróc ontassunez betheac çaretela, eçagutze guciaz betheric: etare elkar admonesta ahal baiteçaqueçue.

15 Eta, anayeác, ausartquichiago scribatu drauçuet partez, çuec orhoit eraciten bacintuztét beçala, Iaincoaz niri eman içan çaitadan gratiagatic,

16 Iesus Christẽ ministre naicençát Gentilac baithan, emplegatzen naicela Iaincoaren Euangelio sainduan, Gentilén oblationea placént dẽçát, Spiritu sainduaz sanctificaturic.

17 Badut beraz cerçaz gloria nadin Iesus Christez, Iaincoazco gaucetan.

18 Ecen ez ninçãde, Christec niçaz eguin eztuen gauçaren erraitera ausart, Gentilén obedientiatara *erekarteco*, hitzez eta eguinez:

19 Signoén eta miraculuén verthutez, Iainco-

aren Spirituaren verthutez: hambat non Ierusalemetic eta aldirietaric Illyriquerano abunda eraci vkan baitut Christen Euangelioa:

20 Hala Euangelioaren predicatzé enseyatzen nincela, ez Christ aippatu içan cen lekutá, berceren fundament gainean edifica ezneçançát.

*Esa.52.15.* 21 Baina scribatua den beçala,*Harçaz denuntiatu içan etzayenéc, ikussiren duté: eta ençun eztutenéc, adituren duté.

*Lehen 1.13* 22*Eta halacotz empatchatu içá naiz anhitzetan ethortera çuetara.

23 Baina orain guehiago lekuric comarca hautan eztudanaz gueroz,*eta ia anhitz vrthez gueroztic çuetara ethortera desir dudanaren gainean:

*Lehen 1.11*

24 Parti nadinean Espaigniarát, ethorriren naiz çuetara: ecen sperança dut iragaitean ikussiren çaituztedala, eta çueçaz hara guidaturen naicela: baldin lehen çuequin içatez sasituche banaiz.

25 Bada orain banoa Ierusalemerát, sainduey administratzera.

26 Ecen Macedoniacoén eta Achaiacoén placera içan da Ierusalemen diraden sainduetaco paubrey cerbaiten partitzera.

27 Ecen hala placer vkan duté, eta çordun-ere badirade hetara:*ecen baldin hayén *on* spiritualetan participant içan badirade Gentilac, hec-ere carnaléz den becembatean aiutatu behar dituzté.

*1.Cor.9.11*

28 Bada *haur* acabatu duquedanean eta hæy fructu

fructu haur conſignatu drauqueedanean, Eſpaigniarát ioanen naiçate çuec baitharic.

29 Eta badaquit ecen çuetara ethor nadinean, Chriſten Euangelioco benedictionearen abundantiarequin ethorriren naicela.

30 Halaber anayeác, othoitz eguiten drauçuet Ieſus Chriſt gure Iaunaz, eta Spirituaren charitateaz, *enequin emplega çaitezten, enegatic Iaincoari eguinen drautzaçuen othoitzéz:

Leben.1.10
2.cor.1.11.

31 Iudean diraden deſobedientetaric deliura nadinçát, eta Ieruſalemē eguiteco dudan adminiſtratione haur, ſainduén gogaraco dençát:

32 Iaincoaren vorondatez çuetara bozcariorequin ethor nadinçát, eta çuequin batean recrea nadinçát.

33 Bada baquezco Iaincoa dela çuequin gucioquin, Amen.

## CAP. XVI.

*1 Paulec Romaco fidel guciac ſalutatzen. 16 Elkar ſalutatzeco. 17 Partialitatey eta ſcãdaloey ihes eguiteco. 19 Romanoen obedientiá. 25 Euangelioa ſecretu eſtalia, 26 Haren manifeſtationea. Fedearen obedientiá.*

1 COmmendatzē drauçuet bada gure arreba Phebe, Cenchreco Eliçaren neſcato dena:

2 Hura *gure* Iaunean recebi deçaçuençát ſainduey dagoten beçala, eta aſſiſti çaquizquiotē çuen behar içanen den gauça gucietan: ecen hura anhitzen oſtateſſa içan da, eta neurorren-ere.

Act.18.2.26.

3 Salutaitzaçue * Priſcilla eta Aquila, ene aiutariac Ieſus Chriſt *Iaunean.*

4 Ceinéc ene viciagatic bere leppoac ſuſmettitu baitituzté: hæy eztrauztet nic neurorrec eſquerrac emaiten, baina Gentilén Eliça guciéccere *bay.*

5 *Saluta eçaçue* hayén etchean den Eliçá-ere. Saluta eçaçue Epenet ene maitea, cein baita Achaiaco primitiá Chriſtean.

6 Saluta eçaçue Maria guregana anhitz trabaillatua.

7 Salutaitzaçue Andronic eta Iunia ene lehen guſſuac, eta ene preſonerquideac, Apoſtoluén arteã notable diradenac, eta ni baino lehen içan diradenac Chriſtean.

8 Saluta eçaçue Amplia ene maitea *gure* Iaunean.

9 Saluta eçaçue Vrban, gure aiutaria Chriſteã eta Stachys ene maitea.

10 Saluta eçaçue Apelles, Chriſtean approbatua. Salutaitzaçue Ariſtobulorenecoac.

11 Saluta eçaçue Herodion ene lehen guſſua. Salutaitzacue Narciſſe baithaco *gure* Iaunean diradenac.

12 Salutaitzaçue Tryphena eta Tryphoſa, *gure* Iaunean trabaillatzen diradenac. Saluta eçaçue Perſida, nic maite dudana *eta* anhitz trabaillatu dena, *gure* Iaunean.

13 Saluta eçaçue Rufo berecia *gure* Iaunean, bayeta haren eta ene ama.

14 Salutaitzaçue Aſyncrito, Phlegon, Hermas,

Patrobas, Hermes, eta hequin diraden anayeac.

15 Salutaitzaçue Philologo, eta Iulia, Nereo, eta haren arrebá, eta Olympa, eta hequin diraden saindu guciac.

16 * Saluta eçaçue elkar pot eguite saindu batez Christen Elicéc salutatzen çaituztez.

1. Cor. 16. 20. 2. cor. 13. 12. 1. pier. 5. 14

17 Eta othoitz eguiten drauçuet, anayeác, gogoa ditzaçuen, çuec recebitu duçuen doctrinaren contra partialitateac eta scandaloac eguiten dituztenac: * eta apparta çaitezten hetaric.

2. Ioan. 10.

18 Ecen halacoéc Iesus Christ gure Iauna eztuté cerbitzatzen, baina bere sabela: eta hitz eztiz eta lausenguzcoz simplén bihotzac seducitzen dituzté.

19 Ecen çuen obedientiá batbederaz eçagutua da: Aleguera naiz bada çueçaz *den becembatean*: baina nahi dut çuhur çareten onean eta simple gaitzean.

20 Eta baquezco Iaincoac deseguinen du Satan çuen oinén azpian sarri. Iesus Christ gure Iaunaren gratia *dela*, çuequin. Amen.

21 Salutatzen çaituztez * Timotheo ene aiutariac, eta Lucioc, eta Iasonec, eta Sosipaterec ene lehen gussuéc.

Act. 16. 1. philip. 2. 19

22 Salutatzen çaituztét *gure* Iaunean nic Tertiusec, epistola *haur* scribatu dudanac.

23 Salutatzẽ çaituztez Gaius-ec, ene eta Eliça guciaren ostatuac. Salutatzen çaituztez Eraste hirico procuradoreác, eta Quart anayeac.

24 Iesus Christ gure Iaunaren gratiá *dela* çuequin gucioquin. Amen.

Eph.3.20. 25 *Bada çuec confirma ahal çaitzaqueztenari, ene Euangelioaren eta Iesus Christen predicationearen araura, * hambat demboraz gueroztic mysterio estaliric egon den reuelationearen *araura:*

Eph.3.9. colos.1.26. 2.tim.1.9. tit.1.2.

26 Baina, orain manifestatu denaren, eta Propheten Scripturéz Iainco eternalaren manuz fedearen obedientiatan natione gucietan declaratu denaren *araura:*

27 Iaincoari, *bada,* çuhur bakoitzari *dela* gloria Iesus Christez eternalqui. Amen.

*Romanoetara scribatu içan da Corinthetic Phebe Cenchrecco Eliçaren nescatoarequin.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN CORINTHIANOETARATCO EPISTOLA LEHENA.

## CAP. I.

4 *Gratiá Christez.* 9 *Iaincoaren vocationea.* 10 *Cōcordiá. Corinthianoén artean targoa.* 14 *Paulen ministerioa.* 18 *Crutzezco hitza.* 21 *Iaincoaren sapientiá, eta munduarena.* 23, 30 *Christ scandalo eta erhogoa, sapientiá eta iustitiá.* 26 *Vocationea. Electionea.*

1 PAulec Iaincoaren vorōdatez Iesus Christen Apostolu içatera deithuac, eta *gure* anaye Sosthenesec,

2 Iaincoaren Eliça Corinthen denari, *Iesus Christez sanctificatuey, *saindu *içatera* deithuey, *Iesus Christ gure Iaunaren icena leku orotan inuocatzen duten guciequin, *cein baita*, hambat hayén nola gure *Iaun:*

Act.5.9. 1.thes.4 7. Rom.1.7. Ephe.1.1. col.1.22. 2.Tim.2. 22.

3 Gratia *dela* çuequin eta baquea gure Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ Iaunaganic.

4 Esquerrac emaiten drauzquiót neure Iaincoari bethi çueçaz, Iesus Christ *Iaunean* çuey eman içan çaiçuen Iaincoaren gratiagatic:

5 Ceren gauça gucietan abrastu içan baitzare-

te hartan,eloquentia eta eçagutze gucian:

6 Iesus Christen testimoniage çuetan confirmatu içan denaren araura:

Philip.3.20 tit.2.11.

7 Hala non ezpaitzarete falta eceinere dohainen, *Iesus Christ gure Iaunaren reuelationearen beguira çaudetela.

*Ceinec, Iaincoac. 1.Thes.5.23.

8*Ceinec cõfirmaturen-ere baitzaituztéz finerano irreprehensible *içateco* Iesus Christ gure Iaunaren egunecotzat.

1.Thess.5.24.

9* Fidel *da* Iaincoa ceinez deithu içan baitzarete Iesus Christ haren Seme gure Iaunaren cõmunionera.

Rom.15.5 philip.3.16

10 Bada othoitz eguiten drauçuet anayeác, Iesus Christ gure Iaunaren icenaz, *gauça berbat erran deçaçuen guciéc, eta eztén çuen artean targoaric: baina çaretẽ iunctatuac adimẽdu batetan eta gogo batetan.

11 Ecen,ene anayeác,declaratu draudate çueçaz Chloes baithacoéc,ecen discordiác diradela çuen artean.

Act.18.24

12 Bada haur diot,ecẽ çuetaric batbederac erraiten duela, Ni behinçát Paulẽ naiz,eta ni*Apolloren, eta ni Cephasen, eta ni Christen.

13 *Ala* çathitua da Christ?Ala Paul crucificatu içan da çuengatic, edo Paulen icenean batheyatu içan çarete?

Act.18.8.

14 Esquerrac emaitẽ drauzquiot Iaincoari ceren ezpaitut çuetaric nehor batheyatu, *Crispo eta Gaio baicen:

15 Nehorc erran ezteçan ecen neure icenean batheyatzen ariçan naicela.

16 Batheiatu vkan dut Estebenen familia-ere:

gaineracoz eztaquit berceric batre batheyatu vkan dudanez.
17 Ecen eznau igorri Chriſtec batheyatzera, baina euangelizatzera: *ez hitzezco çuhurtziatan, Chriſten crutzea ezdeuſẽtara eztadinçát.

*Berriz. 2. 4. 2.pier.1.16*

18 Ecen crutzezco hitza, galtzen diradeney behinçát, erhogoa çaye: baina guri ſaluatzẽ garenoy, *Iainçoaren verthute da.

*Rom.1.16.*

19 Ecen ſcribatua da, *Galduren dut çuhurrẽ çuhurtziá, eta adituén adimendua kendurẽ dut.

*Eſa.29.14. gal.5.4.*

20 *Non *da* çuhurra? nõ *da* Scriba? non *da* ſecula hunetaco diſputaria? eztu erho eguin Iaincoac mundu hunetaco ſapientia?

*Eſa 33.18.*

21 Ecen Iaincoaren ſapientiã munduac Iaincoa eçagutu eztuenaz gueroz *haren* ſapientiatic, Iaincoaren placera içan da predicationearen erhogoaz ſinheſten dutenén ſaluatzera.
22 * Ecen Iuduac-ere ſigno eſquez daude, eta Grecoéc ſapientia bilhatzen duté:

*Mat.12.38*

23 Baina guçaz den becembatean predicatzen dugu Chriſt crucificatua, Iuduey behinçát ſcandalo, eta Grecoey erhogoa *çayena*.
24 Baina deithu diradeney hambat Iuduey nola Grecoey *predicatzen drauegu* Chriſt Iaincoaren verthutea eta Iaincoaren ſapientiá.
25 Ecen Iaincoaren erhogoá guiçonac baino çuhurrago da: eta Iaincoarẽ flaqueçá guiçonac baino borthitzago da.
26 Ecen badacuſſaçue çuen vocationea, anayéac, ecẽ etzaretela çuhurrac anhitz haraguiarẽ arauez, ez borthitzac anhitz, ez nobleac anhitz.

27 Baina munduco gauça erho *diradenac* elegitu vkan ditu Iaincoac confundi ditzançát çuhurrac: eta munduco gauça flaccu *diradenac* elegitu vkan ditu Iaincoac confundi ditzançát gauça borthitzac:

28 Eta munduco gauça noble eztiradenac, eta menospreciatuac elegitu vkã ditu Iaincoac, eta gauça eztiradenac, diradenac deseguin ditzãçát

29 Glorifica eztadinçat haraguiric batre haren aitzinean.

30 Baina harenganic çuec çarete Iesus Christean, * cein eguin içan baitzaicu Iaincoaz sapientia eta iustitia eta sanctificatione eta redemptione:

Hiere. 23. 5.

31 Scribatua den beçala, * Gloriatzen dena, Iaunean gloria dadinçát.

Hiere. 9. 23 2. cor. 10. 17.

CAP. II.

*1 Paul ez hitz goratzaco. 7. Iaincoaren sapiẽtiá predicatzean, 10. Paulen eta berce hura beçalacoén doctora, Iaincoaren Spiritua.*

1 ETa ni ethorri içan naicenean çuetara, anayeác, * ez naiz ethorri eloquentiazco edo sapientiazco excellentiarequin, Iaincoaren testimoniagea denuntiatzen nerauçuela.

Leben. 1. 17

2 Ecen eztut deliberatu vkan deus çuen artean iaquitera, Iesus Christ baicen, hura-ere crucificatua.

3 * Eta ni infirmitaterequin eta beldurrequin eta ikara handirequin içan naiz çuec baithan.

Act. 18. 1.

4 Eta ene minçatzea eta ene predicationea ez-ta içan * ſapientia humanoren hitz gogagarri-tan:baina ſpirituren eta verthuterē eracuſtetan. *Leben 1.17* *2.pier.1.16*

5 Çuen fedea eztençát guiçonén ſapientiatan, baina Iaincoaren potentiatan.

6 Eta ſapientiá denuntiatzen dugu perfectoén artean: eta ſapientiá *diot* ez mũdu hunena,ezeta mũdu hunetaco prince deſeguinen diradenena:

7 Baina denuntiatzen dugu Iaincoaren ſapientia myſteriotan *dena*, *diot* eſtalia, Iaincoac ia dembora gucién aitzinetic gure gloriatan determinatu vkan çuena:

8 Cein mundu hunetaco princietaric batec-ere ezpaitu eçagutu vkan: ecē baldin eçagutu vkan baluté, gloriazco Iauna etzuqueten crucificatu.

9 Baina *predicatzen ditugu*, ſcribatua den beçala, *Beguic ikuſſi eztituen, eta beharric ençun eztituen gauçác, eta guiçonén bihotzetara igan içan eztiradenac,cein Iaincoac hari on daritzoteney appaindu baitrauzté. *Eſa.64.4.*

10 Baina guri Iaincoac reuelatu vkã drauzquigu bere Spirituaz : ecen Spirituac gauça guciac penetratzen ditu,*báy* Iaincoaren gauça barnácere.

11 Ecen guiçonetaric ceinec daquizqui guiçonaren gauçác, guiçonaren ſpiritu hura baithan denac baicen? Halaber Iaincoaren gauçac-ere eztitu nehorc eçagutu vkan, Iaincoaren Spirituac baicen.

12 Bada guc eztugu munduaren ſpiritua recebitu vkan : baina Iaincoaganico Spiritua : Iain-

coaz guri eman içan çaizquigun gauçác eçagut ditzagunçát:

*Leben 1.17* *2.pier.1.16* 13 *Cein denũtiatzen-ere baititugu, ez ſapientia humanoac iracaſtẽ dituen hitzéz, baina Spiritu ſainduac iracaſten dituenéz, gauça ſpiritualac ſpiritualetara appropriatuz.

14 Baina guiçon naturalac eztitu comprehenditzen Iaincoaren Spirituaren gauçác : ecen erhogoa çaizquio, eta ecin adi ditzaque, ceren ſpiritualqui iugeatzen baitirade.

*Pro.27.19.* 15 *Baina *guiçon* ſpiritualac iugeatzẽ ditu gauça guciac, eta bera ezta nehorçaz iugeatzen.

*Eſa.40.13.* *ſap.9.13.* *rom.11.34* 16 *Ecen norc eçagutu du Iaunaren intentionea, hura inſtrui deçan ? baina guc Chriſten intentionea badugu.

## CAP. III.

1 *Spiritual. Carnal.* 3 *Chriſten miniſtre carnalac.* 9 *Iaincoaren edificioa.* 11 *Eliçaren fundamenta.* 16 *Iaincoaren templea.*

1 ETa ni anayeác, ecin minçatu natzayçue çuey ſpiritualey anço, baina carnaley anço, *diot*, haourrey anço Chriſt *Iaunean.*

2 Ezne edatera emaitez haci çaituztet, eta ez viandaz, ceren oraino ecin baitzineçaqueten, baina orain-ere oraino ecin deçaqueçue: ceren oraino carnal baitzarete.

3 Ecen inuidia eta gudu eta targoa çuen artean *denean*, etzarete carnal, eta etzabiltzate guiçonaren araura?

4 Ecen erraiten duenean batac, Ni Paulen naiz: eta berceac, Ni Apolloren, etzarete carnal?
5 Nor da bada Paul, eta nor Apollo, cerbitzari baicen, ceinéz sinhetsi vkan baituçue, eta batbederari Iaunac eman draucan beçala?
6 Nic landatu vkan dut, Apolloc arregatu: baina Iaincoac eman du handitzea.
7 Halacotz beraz landatzen ari dena ezta deus, ezeta arregatzen ari dena: baina hāditzea emaiten duen Iaincoa.
8 Eta landatzen ari dena eta arregatzen ari dena, bat dirade: *eta batbederac recebituren du bere saria bere trabailluaren araura. Psal.62.13. gal.6.5.
9 Ecen gu Iaincoarequin languile gara, çuec Iaincoaren laborãçá, Iaincoarẽ edificio çarete.
10 Iaincoaren gratia niri eman çaitadanaren araura, nabussi iaquinsu batec beçala fundamenta eçarri vkan dut, eta berce batec gainean edificatzen du: baina batbederac becussa nola gainean edificatzen duen.
11 Ecen berce fundamentic nehorc ecin eçar deçaque eçarri denaz berceric, cein baita Iesus Christ.
12 Eta baldin nehorc edificatzen badu fundament hunen gainean vrrhe, cilhar, harri preciatu, egur, belhar, lasto:
13 Batbederaren obrá manifestaturen da: ecen egunac declaraturen du: ceren suaz manifestaturen baita: eta batbederaren obrá nolaco daten, suac phorogaturen du.
14 Baldin cembeit gainean edificatu duenen

obrá badago, ſari recebituren du.

15 Baldin cembeiten obrá erra badadi, galtze eguinen du: baina bera ſaluaturen da, badaric-ere ſuz beçala.

Berr.6.19. 2.cor.6.16. 16 *Eztaquiçue ecen Iaincoaren temple çaretela, eta Iaincoaren Spiritua habitatzen dela çuetan?

17 Baldin norbeitec Iaincoaren templea deſeguin badeça, deſeguinen du hura Iaincoac: ecen Iaincoaren templea ſaindu da, cein baitzarete çuec.

18 Ezteçala nehorc bere buruä ſeduci: baldin cembeitec vſte badu çuen artean çuhur dela mũdu huneta͂, erho eguin bedi, çuhur dadinçát.

19 Ecen mundu hunetaco çuhurtziá, erhogoa da Iaincoaren aitzinean: ecen ſcribatua da, *Hatzamaiten ditu çuhurrac hayén finecian.

Iob 5.13.

Pſal.94.11 20 Eta berriz, *Iaunac ezagutzen du ecen çuhurrén penſamenduac vano diradela.

21 Bada, eztadila nehor gloria guiçonétan: ecen gauça guciac çuen dirade:

22 Bada Paul, bada Apollo, bada Cephas, bada mundua, bada vicitzea, bada herioa, bada preſenteco gauçaric, bada ethortecoric, guciac dirade çuen: eta çuec Chriſten, eta Chriſt Iaincoaren.

## CAP. IIII.

*1 Chriſten miniſtre. 3 Iudicatzea. 8 Corinthianoac ingrat. 11 Paul bere eſcuez trabaillatu. 14 Reprehenditzeco moiena. 15 Chriſt predicatzen dutenac. 16 Paulec bere imitatzera exhortatzen. 20 Hitza. Verthutea.*

1* EStima beça guçaz guiçonac Chriſten miniſtréz, eta Iaincoaren ſecretuén diſpenſaçaléz beçala.

2 Baina gaineracoaz, neceſſario da diſpenſaçaletan leyal batbedera eriden dadin.

3 Niçaz den becembatean, anſia guti dut çueçaz edo iugemendu humanoz iudicatu içatearen:are neure buruä-ere eztut iudicatzen.

4 Ecen deuſetan eztut neure buruä hoguendun ſenditzē: ordea huneçaz eznaiz iuſtificatu: baina ni iudicatzen nauena,Iauna da.

5 * Halacotz, ezteçaçuela dembora baino lehen iudica,Iauna dathorreno,ceinec ilhumbeco gauça eſtaliac-ere arguituren baititu, eta bihotzetaco conſeilluac manifeſtaturen : eta orduan laudorio vkanen du batbederac Iaincoaganic.

*Matt.7.1. rom.2.1.*

6 Bada anayác, gauça hauc minçatzeco manera batez itzuli vkan ditut neure eta Apolloren gainera, çuen cauſaz : gutan ikas deçaçuençát, ſcribatua den baino guehiago ez preſumitzera: bata bercearen contra hant etzaiteztençát berceren contra.

7 Ecen norc hi reputationetan eçarten au? eta cer duc recebitu vkan eztuanic? eta baldin recebitu vkan baduc, cergatic gloriatzen aiz recebitu ezpahu beçala?

8 Ia aſſe çarete, ia abraſtu çarete, gu gabe reguetu çarete:eta aitzineçate regna,guc-ere çuequin batean regna deçagunçát.

9 Ecen badaritzat Iaincoac gu monſtrança ęçarri gaituela, *baicara* azquen Apoſtoluac, heriotara condemnatuac beçala: ecen *beguietaco* miragarri eguin içan gaitzaizte munduari eta Aingueruey eta guiçoney.

10 Gu erho Chriſtgatic, eta çuec çuhur Chriſt *Iaunean*, gu flaccu, eta çuec ſendo: çuec noble, eta gu bilaun. Ordu hunetarano eta goſſe gara eta egarri gara, eta billuci gara, eta buffetatzen gara, eta leku batetic bercera errebelatuac gabiltza:

*Act.20.34 1.theſſ.2.9. 2.theſſ.3.8*

11 *Eta trabaillatzen gara, gure eſcu propriéz lan eguinez.

*Matt.5.44 luc 23.34. act.7.60.*

12 *Iniuriatzen gara, eta vngui erraiten dugu: perſecutatzen gara, eta ſuffritzen dugu:

13 Diffamatzen gara, eta othoitz eguiten dugu, munduco ſcobaquin beçala eguin içan gara, *eta* gucién karracaquin beçala oraindrano.

14 Eztrauzquiçuet gauça hauc ſcribatzen ahalque çaitzatedançát, baina neure haour maite anço auiſatzen çaituztet.

15 Ecen hamar milla pedagogo bacintuzteere Chriſtean, ez ordea anhitz aita: ecen Ieſus Chriſtean, Euangelioaz nic engendratu vkan çaituztet.

16 Othoitz eguiten drauçuet bada, ene imitaçale çareten.

17 Halacotz igorri drauçuet Timotheo, cein baita ene ſeme maitea eta fidela *gure* Iaunean, harc orhoit eraciren drauzquiçue ceric diraden ene bideac Chriſtean, leku gucietan Eliça oro-

tan iracaſten dudan beçala.

18 Ni çuetara ethorteco ezpaninz beçala, batzu hantuac içan dirade.

19 Baina ethorriren naiz ſarri çuetara, *baldin Iaunac nahi badu: eta eçaguturen dut, ez hantu içan diraden horién hitza, baina verthutea.

*Act. 18. 21 iacq. 4. 15.

20 Ecen Iaincoaren reſumá ezta hitzean, baina verthute *ſpiritualean*.

21 Cer nahi duçue? cihorrequin ethorrirē naiz çuetara, ala charitaterequin eta emetaſſunezco ſpiriturequin?

CAP. V.

*1 Corintheco paillarta. 3 Excōmmunicationea. 6 Altchagarri çaharraren purgatzea. 7 Chriſt gure Bazcoa. 9 Cein diraden excommunicatzeco.*

1 GVciz ençuten da çuen artean paillardiça *badela*, eta halaco paillardiça cein Gentilén artean aippatzen-ere ezpaita: ecen cembeitec bere aitaren emaztea entretenitzen duela.

2 Eta çuec hantuac çarete, eta eztuçue nigar lehen eguin, ken ledinçát çuen artetic eguitate haur eguin duena.

3 Nic behinçát gorputzez abſent beçala, baina preſent ſpirituz, ia deliberatu dut preſent beçala, haur hala eguin duenaren,

4 (Çuec eta ene ſpiritua Ieſus Chriſt gure Iaunaren icenean bildurric, Ieſus Chriſt gure Iaunaren botherearequin.)

5 Halacoaren Satani liuratzera haraguiaren de-

ſtructionetan, ſpiritua ſalbu dençát Ieſus Iauna-
ren egunean.

Gal.5.9. 6 Çuen gloriatzea ezta ona:*Eztaqui çue ecen altchagarri gutibatec orhe gucia altcha eraciten duela?

7 Purga eçaçue bada altchagarri çaharra,orhe berri çaretençát,altchagarri gabe çareten beçala: ecen gure Bazcoa guregatic ſacrificatu içan da,*cein baita* Chriſt.

8 Bada eguin deçagun beſta, ez altchagarri çaharrez, ezeta malitiataco eta gaichtaqueriataco altchagarriz, baina altchagarri gaberico *oguiz, diot* puritatezcoz eta eguiazcoz.

9 Scribatu drauçuet epiſtolán, nahaſta etzaitezten paillartequin:

10 Eta ez guciz mũdu hunetaco paillartequin, edo auaritioſoequin, edo harrapariequin, edo idolatrequin: ezpere ſegur behar cenduquete mundutic ilki.

11 Baina orain ſcribatu drauçuet etzaitezten nahaſta, baldin cembeit anaye deitzen denic paillard bada, edo auaritioſo, edo idolatre, edo gaitzerraile, edo hordi, edo harrapari: halacoarequin ian-ere ezteçáçuen.

12 Ecen cer iudicatzeco dut nic campoco diradenez-ere? eztuçue barneco diradenéz çuec iudicatzen?

13 Baina campocoac Iaunac iudicatzen ditu. Ken eçaçue bada gaichto hori ceurón artetic.

Cap.

CAP. VI.

*1 Auciéz. 11 Ikuci, sanctificatu, iustificatu içatea. 13 Paillardiçari ihes eguiteco. 15 Christen membro. 19 Spiritu sainduaren temple.*

1 HAuçu da çuetaric cembeit, eguitecoric duenean berce baten contra, iugemēdutara ioaitera iniustoén aitzinera, eta ez sainduén aitzinera?

2 *Eztaquiçue ecen sainduéc mundua iugeaturen dutela? eta baldin çueçaz mundua iugeaturen bada, indigne çarete gauça chipienén iugeatzeco? *Sap.3.8.*

3 Eztaquiçue ecen Ainguerüac iugeaturē ditugula? cēbatez areago vicitze hunetaco gauçac?

4 Halacotz bada baldin vicitze hunetaco gaucéz gorteac badituçue, Eliçán estima chipitacoen diradenac eçar itzaçue iar-lekuan.

5 Çuen ahalquetan, *haur* erraiten drauçuet. Horrela da çuen artean çuhurric eztén, ez are bat, bere anayén artean iugea ahal deçaquenic?

6 Baina anayeac anayearen contra auci du, eta are infidelén aitzinean.

7 Ia segur guciz falta da çuetan, cerē auci baituçue ceurón artean: *ceren eztuçue lehen iniuria suffritzen? cerē eztuçue lehen calte recebitzen? *Matt.5.39 luc 6.29. rom.12.19.*

8 *Baina çuec iniuria eguiten duçue eta calte: eta are anayey. *1.thess.4.6.*

9 Ala eztaquiçue ecen iniustoéc eztutela Iain-

coaren resumá heretaturen?

10 Etzaiteztela engana, ez paillartéc, ez idolatréc, ez adulteroéc, ez malguëc, ez bugréc, ez ohoinéc, ez auaritiosoéc, ez hordiéc, ez gaitzerrailéc, ez harrapariéc, eztute Iaincoaren resumá heretaturen.

Tit.3.3. 11 *Eta halaco gauça cinetén batzu: baina ikuci çarete, baina sanctificatu çarete, baina iustificatu çarete, Iesus Iaunarẽ icenean, eta gure Iaincoaren Spirituaz.

Ber.10.23. eccl.37.31. 12 *Gauça guciac permettitzen çaizquit, baina guciac eztirade probetchutaco: gauça guciac permettitzen çaizquit, baina ni eznaiz deusen botherearen suiectioneraco.

13 Viandác sabelaren, eta sabela viandén: baina Iaincoac haur eta hec deseguinẽ ditu: baina gorputza ezta paillardiçataco, baina Iaunarendaco, eta Iauna gorputzarendaco.

Rom.6.5. 14 Eta Iaincoac *gure* Iauna-ere resuscitatu du, **eta* gu-ere resuscitaturen gaitu bere bothereaz.

15 Eztaquiçue ecen çuen gorputzac Christen membro diradela? edequiric beraz Christen membroac paillarda baten membro eguinen ditut? Guertha eztadila.

Gen.2.24. matt.19.5. marc 10.7. eph.5.31. 16 Ala eztaquiçue ecẽ paillarda bati iũctatzen çayona, gorputz bat harequin eguiten dela? *Ecen eguinen dirade, dio, biga haraguibat.

17 Baina Iaunari iunctatzen çayona, spiritubat da.

18 Ihes eguioçue paillardiçari: ecen guiçonac daguian bekatu gucia gorputzetic campoan da,

baina paillardiça eguiten duenac, bere gorputz proprira bekatu eguiten du.

19 *Ala eztaquiçue ecē çuen gorputza temple dela çuetan den Spiritu ſainduarē, cein baituçue Iaincoaganic, eta etzaretela ceuron buruën? *Leben 3.16* *2.cor.6.16.*

20 *Ecen eroſſiac çarete precioz: glorifica eçaçue bada Iaincoa çuen gorputzean, eta çuen ſpirituan, cein baitirade Iaincoarenac. *Ber.7.23.* *1.pier.1.18*

## CAP. VII.

1 *Ezconduéz.* 8 *Alhargunéz.* 12. *Emazte infidelarequin ezcondua den fidelaz.* 17 *Bere vocationean batbedera ebilteco.* 18 *Circonciſionea. Preputioa.* 21 *Cerbitzariéz.* 25 *Virginéz.*

1 ETa ſcribatu drautaçuē gaucéz den bęcembatean, on *da* guiçonaren emazteric ez hunquitzea.

2 Baina paillardiçari ihes eguiteagatic, batbederac bere emaztea biu, eta batbederac bere ſenharra biu.

3 *Emazteari ſenharrac çor draucan onheriztea renda bieçó: eta halaber emazteac-ere ſenharrari. *1.Pier.3.7.*

4 Emazteac bere gorputza eztu *bere* bothereco: baina ſenharrac: eta halaber ſenharrac-ere bere gorputza eztu *bere* bothereco, baina emazteac.

5 Ezteçaçuela defrauda batac bercea cembeit demboratacotz conſentimendu batez ezpada, baruretan eta orationetan emplega çaitezten-

çát:eta harçara elkargana itzul çaitezte, Satanec tenta etzaitzatençát çuen incontinentiagatic.

6 Baina haur erraiten dut permissionez, ez manamenduz.

7 Ecen nahi nuque guiçon guciac liraden ni beçala: baina batbederac bere dohain propria du Iaincoaganic, batac hunela eta berceac halá.

8 Bada erraiten drauet ezcondu-gabey eta alharguney, on dela hayençat, baldin badaudez ni beçala.

9 Baina baldin cõtinent ezpadirade, ezcon bitez: ecen hobe da ezconcea ecen ez erre içatea.

10 Eta ezconduey denuntiatzen drauet, ez nic baina Iaunac, *Emaztea ſenharraganic eztadin parti.

*Matt.5.32 eta 19.9. marc 10.11 luc 16.18.*

11 Eta baldin parti badadi bego ezcõdu gabe, edo ſenharrari reconcilia bequió: ſenharrac-ere emaztea ezteçala vtzi.

12 Baina bercey nic erraiten drauet, ez Iaunac, Baldin cembeit anayec emazte infidela badu, eta emazteac cõſentitzen badu harequin habitatzera, ezteçan hura vtzi.

13 Eta baldin cembeit emaztec ſenhar infidela badu, eta ſenharrac conſentitzen badu harequin habitatzera, ezteçan hura vtzi.

14 Ecen ſanctificatu da ſenhar infidela emazteaz, eta ſanctificatu da emazte infidela ſenharraz: bercela çuen haourrac ſatſu lirateque: baina orain ſaindu dirade.

15 Eta baldin infidela partitzen bada, parti dadin *ecẽ* ezta ſuiet anayea edo arrebá halaco *gau-*

*cetan*:baina baquera deithu gaithu Iaincoac.
16 Ecen cer daquin emaztea, eya ſenharra ſaluaturen dunanez ? edo cer daquic ſenharrá, eya emaztea ſaluaturen duanez?
17 Baina nola batbederari *dohaina* partitu baitrauca Iaincoac, nolà batbedera deithu baitu Iaunac,hala ebil bedi : eta hunela Eliça gucietan ordenatzen dut.
18 CirconciditurIc norbeit deithu içan da?ezterakarran *preputioa*:preputioan norbeit deithu içan da?eztadila circoncidi.
19 Circõciſionea ezta deus,eta preputioa ezta deus : baina Iaincoaren manamenduén beguiratzea.
20 * Batbedera cer vocationetan deithu içan baita hartan bego. *Ephe.4.1.*
21 Sclabo deithu aiz?eztuála arrãguraric : baina baldin are libre eguin ahal bahadi, *harçaz* lehen vſat eçac.
22 Ecen Iaunean deithu içan den ſclaboa, Iaunarẽ libre da:eta halaber libre dethua, Chriſten ſclabo da.
23 *Precioz eroſſiac çareté, etzaretela guiçonén ſclabo. *Leben 6.20* *1.pier.1.18*
24 Batbedera certã deithu içan baita,anayeác, hartan bego Iaincoa baithan.
25 Eta virginéz den becẽbatean Iaunaren manamenduric eztut: baina cõſeillu emaiten drauçuet,Iaunaganic fidel içatera miſericordia vkan dudanac beçala.
26 Eſtimatzen dut bada haour on dela preſen-

teco necessitateagatic,ecen on *dela* guiçonarendaco hunela içatea.
27 Emazterequin lothua aiz?ezteçála bilha separationeric:emazteaganic lachatu aiz?ezteçála bilha emazteric.
28 Bada baldin ezcon bahadi-ere, eztuc bekaturic eguin:eta baldin ezcõ badadi virginá, eztu bekaturic eguin: baina halacoéc tribulatione vkanẽ duté haraguiã:baina nic guppida çaituztet.
29 Baina haur erraiten draucuet,anayeác,ecen demborá labur dela hemendic harát, emaztedunac-ere,emazteric ezpalute beçala diraden:
30 Eta nigarrez daudenac, nigarrez ezpalaude beçala : eta aleguera diradenac, aleguera ezpalirade beçala: eta erostẽ dutenac, posseditzen ezpaluté beçala:
31 Eta mundu hunez vsatzen dutenac,vsatzen ezpaluté beçala : ecen mundu hunen figurá iragan doa.
32 Eta nahi nuque çuec arrangura gabe cineten.Emazte gabe denac,artha du Iaunaren gaucéz,nolatan Iaunaren gogaraco daten:
33 Baina emaztedunac,artha du mũduco gaucéz,nolatan emaztearen gogaraco daten.
34 Diuers dirade emazte *ezcondua* eta virginá: *emazte* ezcondu gabeac,artha du Iaunaren diraden gaucéz,gorputzez eta spirituz sainda dẽçát: baina *emazte* ezconduac,artha du mũduco gaucéz,nolatan senharraren gogaraco daten.
35 Eta haur çuen probetchutan erraiten dut, ez laçoa eçar dieçaçuedençát: baina carazqui

eta moldez Iaunari iuncta çaquizquiotēçát empatchuric batre gabe.

36 Baina baldin edoceinec vste badu ecen desohore duela haren virginác bere adin florea iragan deçan, eta hala eguin behar dela: nahi duena begui, eztu bekaturic eguiten: *ezcon bitez.

*ezcon bitez, hala beldur diraden virginác.

37 Baina bere bihotzean fermu dagoenac, necessitateric eztuela, baina du bere vorondate propriaren gainean puissança, eta haur deliberatu bere bihotzean, bere virginaren beguíratzera, vngui eguiten du.

38 Bada, bere virginá ezconcen duenac, vngui eguiten du: baina ezconcen eztuenac, hobequi eguiten du.

39 *Emaztea lothua da legueaz haren senharra vici den dembora gucian: baina haren senharra hil badadi, libre da norequin nahi den ezconceco, solament *gure* Iaunean.

Rom.7.2.

40 Baina dohatsuago da baldin hala badago, ene conseilluaren araura: *eta estimatzen dut nicere Iaincoaren Spiritua badudala.

1.Thess.4.8

CAP. VIII.

1 *Idoley sacrificatu içan diraden gaucéz. Charitateaz. 4 Iaincobat bera. 6 Iaun-bat. 8, 10 Viandezco scandaloaz.*

1 ETa idoley sacrificatzē diraden gaucéz den becēbatean, badaquigu ecē guciéc eçagutze badugula: eçagutzeac hácen du, baina charitateac edificatzen.

2 Eta baldin edoceinec vſte badu cerbait badaquiala, eztu oraino eçagutu deus eçagutu behar den beçala.

3 Baina baldin cembeitec Iaincoari on badaritza, hura harçaz iracatſi içan da.

4 Bada idoley ſacrificatzen diraden gaucén iateaz den becembatean, badaquigu ecen deus eztela idolá munduan, eta eztela berce Iaincoric bat baicen.

5 Ecen iainco deitzen diradenac badirade-ere, bada ceruän bada lurrean (nola anhitz iainco baita, eta anhitz iaun.)

6 Baina guc Iainco Aitabat dugu, ceinaganic *baitirade* gauça guciac, eta gu hartan: *eta Iaunbat, Ieſus Chriſt, ceinez *baitirade* gauça guciac, eta gu harçaz.

*Ioan 13.13*
*Herriz 12.3*

7 Baina ezta gucietan eçagutzea, ecen batzuc idolaren conſcientiarequin oraindrano, idoley ſacrificatutic beçala iaten duté: eta hayén conſcientiá nola ezpaita fermu, ſatſutzen da.

8 Bada viandác ezgaitu Iaincoaren gogaracotzenago: ecen ian badeçagu-ere, ezgara vkanſuago: eta ian ezpadeçagu-ere, eztugu gutiago.

9 Baina beguiraucue çuen puiſſança hori infirmo diradeney nolazpait ſcandalotan eztén.

10 Ecen baldin norbeitec ikus baheça hi eçagutze duanor, iarriric agoela idolén templeco mahainean, infirmo denaren conſcientiá ezta inſtruituren idolari ſacrificatu diraden gaucetaric iatera?

*Rom. 14.15*

11 *Eta hire eçagutze horreçaz galduré da ana-

ye infirmo dena, ceinagatic Chriſt hil içã baita?

12 Bada hunela anayén contra bekatu eguiten duçueneã, eta hayén conſcientia infirmoa çaurtzen duçuenean, Chriſten contra bekatu eguiten duçue.

13 Halacotz, baldin viandác ene anayea ſcandalizatzen badu, eztut ianen haraguiric ſeculan, neure anayea ſcandaliza ezteçadançát.

## CAP. IX.

*1 Corinthianoác Paulen lana. 4. Euangelioa predicatzen dutenén entretenimenduaz. 12. Sari gabe cergatic Paulec predicatu duen. 19. Cergatic gucién ſuiet eguin içan den. 24. Laſterreco precioa.*

1 EZnaiz Apoſtolu? eznaiz libre? eztut Ieſus Chriſt gure Iauna ikuſſi? etzarete çuec ene lana *gure* Iaunean?

2 Baldin bercén Apoſtolu ezpanaiz, çuen berere banaiz: ecen ene Apoſtolutaſſunaren cigulua çuec çarete *gure* Iaunean.

3 Ene defenſá examinatzen nautenac baithara, haur da:

4 Ala extugu bothere iateco eta edateco?

5 Ala eztugu bothere emazte arreba batẽ gucietan erabilteco, berce Apoſtoluéc, eta Iaunaren anayéc, eta Cephaſec beçala?

6 Edo, nic neurorrec eta Barnabaſec eztugu bothere lanic ez eguiteco?

7 Norc guerlaric eguiten du bere despendioz behinere? norc landatzen du mahasti, eta haren fructutic eztu iaten? edo norc bazcatzen du arthaldea, eta arthaldearen eznetic eztu edaten?

8 Ala guiçonaren arauez gauça hauc erraiten ditut? ala Legueac-ere eztitu gauça hauc erraiten?

*Deut.25.4* *1.tim.5.18*

9 Ecen Moysesen Leguean scribatua da, * Eztraucac ahoa lothuren idi bihitzen ari denari. Ala artha du idiéz Iaincoac?

10 Ala haur guciz guregatic erraiten du? segur *haur* guregatic scribatua da: ecen sperançatan behar du laboratzen duenac, laboratu: eta bihitzen duenac participant içateco sperançatan.

*Rom.15.25.*

11 *Baldin guc çuey gauça spiritualac erein badrauzquiçuegu, gauça handia da çuen carnalac biltzen baditugu?

12 Baldin berceac bothere hunetan çuen arteã participant badirade, *ceren* ez cineçago gu? baina eztugu bothere hunez vsatu vkan: aitzitic gauça guciac suffritzen ditugu, Christen Euangelioari empatchuric batre eztemoguncát.

*Deut.18.1.*

13 * Eztaquiçue ecen sacrificioac eguiten dituztenéc, gauça sacrificatuetaric iaten dutela? *eta* aldarean emplegatzen diradenéc, aldarearequin perticipatzen dutela?

14 Hala gure Iaunac-ere ordenatu vkan draue Euangelioa predicatzen duteney, Euangeliotic vici diraden.

15 Badaric-ere nic gauça hautaric batez-ere eztut vsatu vkan. Eta gauça hauc eztitut scri-

batu, hala niri eguin daquidançat: ecen hobe nuque hil nendin ecen ez nehorc ene glorificamendua ezdeusetara deçan.

16 Ecen Euangelizatzen badut-ere, eztut ceren gloria nadin: ecen necessitateac eraguiten draut: eta malediĉtione niri-baldin euangeliza ezpadeçat.

17 Ecen baldin gogotic haur eguiten badut, sari dut: baina baldin gogoz garaitic eguiten badut, dispensationea eman içan çait.

18 Cer sari dut beraz? Euãgelioa predicatzen dudanean, Christen Euangelioa deus hartu gabe predica deçadan, ez teçadan gaizqui vsat neu re bothereaz Euangelioan.

19 Ecen gucietaric libre banaiz-ere, gucien suieĉtioneco neure burua eguin vkan dut, gende guehiago irabaz deçadançát.

20 Eta eguin içan natzaye Iuduey Iudu beçala, Iuduac irabaz ditzadançát: Leguearen azpico diradeney, Leguearen azpico baninz beçala, Leguearen azpian diradenac irabaz ditzadançát.

21 Legue gabey Legue gabe baninz beçala, (Legue gabe ezpanaiz-ere Iaincoagana, baina Christen Leguearen azpico) Legue gabeac irabaz ditzadançát.

22 Eguin içan natzaye infirmoey infirmo beçala, infirmoac irabaz ditzadançát: guciey eguin içan natzaye gauça gucia, guciz batzu salua ditzadançat.

23 Eta haur eguiten dut Euangelioagatic, çue-

quin batean participant hartan eguin nadinçát.
24 Eztaquiçue ecen ſtadioan laſter eguiten dutenéc, guciéc laſter eguitē badutela, baina batec precioa hartzēn duela? hala laſter eguiçue nòn har baiteçaqueçue.
25 Eta combatitzen den gucia, regimenduz gauça gucietan vici da: eta hec *eguiten duté* coroa corrumpituren den baten vkaiteagatic: baina guc corrumpituren eztenagatic.
26 Nic bada hala laſter eguiten dut, ez eztaquidala nola: hala bataillatzen naiz, ez aireari baneraunſa beçala.
27 Baina gaztigatzen dut neure gorputza, eta ſuiectionetara erekartē: eceinere maneraz bercey, predicatu ondoan, neuror reprobatu eriden eznadinçát.

CAP. X.

1 *Aitén Baptiſmoa.* 4. *Chriſt harri ſpiritual.* 6. *Guthiciá.* 7. *Idolatriá.* 8. *Paillardiçá.* 9. *Chriſten tentatzea.* 10. *Murmuratzea.* 13. *Tentationea.* 14 *Idolatriari ihes eguiteco.* 25. *Viandén vſagea.* 32. *Scandalizatzetic beguiratzeco.*

Exod 13. 21. nom. 9. 18. Exod. 14. 22.

1 NAhi dut bada daquiçuē anayeác, * ecen gure Aitác oro hodey azpian içan diradela, * eta guciac itſaſſoaz iragan içan diradela:
2 Eta guciac Moyſeſtan batheyatu içan diradela hodeyean eta itſaſſoan.

Exo. 16. 22

3 * Eta guciéc vianda ſpiritual ber batetaric

ian dutela.

4 * Eta guciéc edari ſpiritual-ber batetaric e- dan dutela: ecen edaten çutén iarreiquiten ça- yen Harri ſpiritualetic: eta Harria cen Chriſt.

*Exod.* 17.6 *nom.* 20.10 *eta* 21.16.

5 Baina hetaric anhitzen gainean eztu placer hartu vcan Iaincoac: * ecen deſeguin içan dira- de deſertuan.

*Nõ.* 26.65.

6 Eta gauça hauc gure exemplutan içan dira- de, guthicia eztitzagunçat gauça gaichtoac, * nola hec guthiciatu baitituzté.

*Nõ.* 11.14. *eta* 26.64.

7 Eta etzaretẽ idolatre, hetaric batzu leguez, ſcribatua den beçala, * Iarri içan da populua ia- tera eta edatera, eta iaiqui içan dirade doſtetara.

*pſal.* 106. 14. *Exod.* 32.6

8 Eta ezteçagun paillarda, * hetaric batzuc paillardatu vkan dutén beçala, eta hil içan bai- tirade egun batez hoguey eta hirur milla.

*Nom.* 25.9.

9 Eta ezteçagun tenta Chriſt, * hetaric batzuc tentatu vkan dutén beçala, eta ſuguéz deſeguin içan baitirade.

*Nom.* 21.6.

10 * Eta ezteçaçuen murmura, hetaric batzuc murmuratu vkan dutén beçala, eta deſeguin i- çan baitirade deſeguileaz.

*Nõmb.* 14. 37. *heb.* 3.17.

11 Eta gauça hauc gucioc exemplutan heltzen çaizten hæyr: eta ſcribatu içan dirade gure ad- monitionetan, ceinetara demborén finac heldu içan baitirade.

12 Hunegatic bada çutic dagoela vſte duenac, beguira biu error eztadin.

13 Tẽtationeç etzaituztez hartu humanoc bai- cẽ: eta fidal *da* Iaincoa, ceinec ezpaitu permetti- turẽ tẽta çaiteztẽ egar ahal deçaque çuẽ baino

guehiagoz : baina emanen du tẽtationearequin batean ilkitbidea-ere sustenga ahal deçaçuençát.

14 Hunegatic,ene maiteác, ihes egui çue idolatriatic.

15 Adituey beçala minço natzaiçue:ceuroc iugea cçaçue erraiten dudanaz.

16 Benedictionezco copa benedicatzen duguna,ezta Christen odolaren communionea? *eta* hausten dugun oguia ezta Christen gorputzaren communionea?

17 Ecen *gu* baicara anhitz, oguibat *gara eta* gorputzbat : ceren guciac ogui batetan participant baicara.

18 Ikussaçue Israel haraguiaren arauez *dena*: sacrificioac iaten dituztenac, eztirade aldarean participant?

19 Cer erraiten dut beraz? idola cerbait dela? edo idolari sacrificatu çayona, cerbait dela? *ez*.

20 Aitzitic *diot*, ecen Gentilée sacrificatzen ditutzen gauçác, deabruey sacrificatzen drauztela, eta ez Iaincoari: eztut bada nahi çuec participant çareten deabruén.

21 Ecin Iaunaren copá edan deçaqueçue, eta deabruaren copá: ecin Iaunaren mahaineã participant çara tezte: eta deabruén mahainean.

Eccle.37.31. Ieben.6.13. 22 Ala nahi dugu asserre eraci Iauna? ala hura baino borthitzago gara?

23 *Gauça guciac permettitzẽ çaizquit,baina guciac eztirade probetchutaco: gauça guciac

permettitzen çaizquit, baina gauça guciéc ez-
tute edificatzen.
24 Nehorc ezteçala bere propria bilha, baina
batbederac bercerena.
25 Haraquinçán ſaltzẽ den orotaric, ianagaçue:
deus galdeguin gabe conſcientiagatic.
26* Ecen Iaunarena da lurra eta hartango com- *Pſal.24.1.*
plimendua.
27 Eta baldin infideletaric cembeitec gomita-
tzen baçaituztez, eta ioan nahi baçarete: aitzi-
nera eçarten çaiçuen orotaric ianagaçue, deus
galdeguin gabe conſcientiagatic.
28 Baina baldin cembeitec erran badieçaçue,
Haur idoley ſacrificatua da, ezteçaçuela ian, a-
uertitu çaituztenagatic, eta conſcienti agatic: e-
cen Iaunarena da lurra eta hartango compli-
mendua.
29 Baina conſcientiá erraitẽ diat, ez hirea, bai-
na bercearena: ecen cergatic ene libertatea iu-
dicatzen da berceren conſcientiaz?
30 Eta baldin nic gratiáz *viandán* participa-
tzen badut, cergatic gaichto iudicatzẽ naiz nic
eſquerrac emaiten ditudan gauçagatic?
31 * Bada, edo iaten baduçue, edo edaten ba- *Coloſs.3.17*
duçue. edo cerbait berceric eguiten baduçue,
gucia Iaincoaren gloriatan eguiçue.
32 Çareten ſcandalo gabe eta Iuduetara eta
Grecoetara eta Iaincoaren Eliçagana.
33 Ni-ere gauça gucietan gucién gogaraco
naicen be çala, bilhatzẽ eztudala neure probet-
chu propria; baina anhitzena, ſalua ditecençat.

## CAP. XI.

*1 Christ eta Apostoluac imitatzeco. 4. Nolà nehor Eliçán perportatzeco. 17. Nola biltzeco. 20 Iaunaren Cenáz, eta nola Corinthianoéc abusatzen çuten harçaz. 31. Norc bere buruä ingeatzeco. 32. Iaunaz ingeatu içatea.*

*2.Thes. 3.9* 1 *CAretén ene imitaçale, ni-ere Christen beçala.

2 Bada laudatzen çaituztet, anayeác, ceren ene gauça guciez orhoit baitzarete, eta *ceren* eman drauzquiçuedan beçala, ordenançac eduquiten baitituçue.

*Eph. 3. 23.* 3 Baina nahi dut daquiçuen, *ecen guiçon guciaren buruä Christ dela: eta emaztearen buruä, guiçona: eta Christen buruä, Iaincoa.

4 Guiçon buruä estaliric othoitz eguiten, edo prophetizatzen duen guciac, desohoratzen du bere buruä.

5 Baina emazte buruä estali gaberic othoitz eguiten edo prophetizatzen duen guciac, desohoratzen du beré buruä: ecen hambat da nola arradatua baliz.

6 Ecen baldin estaltzẽ ezpada emaztea, motzere bedi: eta baldin deshonest bada emaztearen moztu edo arradatu içatea, estal bedi.

*Gen. 1. 26. 27. eta. 5. 1. eta 9. 6. colos. 3. 10.* 7 Ecen guiçonac eztu estali behar buruä, *Iaincoaren imaginá eta gloriá denaz gueroz: baina emaztea, guiçonaren gloriá da.

8 Ecen guiçona ezta emaztetic, baina emaztea guiço-

guiçonetic.

9 *Ecen are ezta guiçona creatu içan emazteagatic, baina emaztea guiçonagatic.

Gen.2.23. eta 5.1. eta.9.6.

10 Hunegatic vkaiteco du emazteac buruän seignalea suiectionetan dela, Aingueruäcgatic.

11 Guciagatic-ere ez guiçona emaztea gabe, ezeta emaztea güiçona gabe, *gure* Iaunean.

12 Ecen nola emaztea guiçonetic, *baita*, hala guiçona-ere emazteaz : baina gauça guciac Iaincoaganic.

13 Ceuroc baithan iugea eçaçue, Honest da emazteac estali gaberic Iaincoari othoitz daguion?

14 Ala naturác berac-ere etzaituztetziracasten ecen guiçonac adatsdun içatea desohore duela?

15 Baina emazteari adatsdũ içatea gloria çayola? cerẽ adatsa estalguitzat eman içan baitzayó.

16 Eta baldin cembeitec iharduqui çale dela irudi badu, guc halaco costumaric eztugu, ez Iaincoaren Elicéc-ere.

17 Badá haur *hala* declaratzen drauçuet non ezpaitzaituztet, laudatzen, cerẽ ezpaitzarete emendiotan biltzen, baina desemendiotan.

18 Ecen lehenic, biltzen çaretenean Eliçán, ençuten dut diuisione dela çuen artean: eta parte sinhesten dut.

19 Ecen behar da heresiac-ere çuen artean diraden, phorogatuac manifest eguin ditecençat çuen artean.

20 Bada elkargana biltzen çaretenean, ezta *hori* Iaunaren Cenaren iatea.

21 Ecen batbedera auançatzen da bere affariaren hartzera iateracoan: eta bata da gosse, eta bercea da hordi.

22 Ala eztituçue etcheac *hetan* iateco eta edateco? ala Iaincoaren Eliçá menospreciatzẽ duçue, eta ahalquetzen dituçue eztutenac? Cer erranen drauçuet? Laudaturen çaituztet hunetán? etzaituztet laudatzen.

23 Ecen nic recebitu vkan dut Iaunaganic eman-ere drauçuedana: nola Iesus Iaunac, traditu içan cen gauean, hartu çuen oguia:

*Mat. 26. 26. marc 14. 22. luc. 22. 19.*

24 *Eta gratiác rendaturic, hauts ceçan, eta erran ceçan, Har eçaçue, ian eçaçue: haur da ene gorputza çuengatic hausten dena: haur eguiçue ene memoriotan.

25 Halaber copa-ere *har ceçan* affaldu cenean, cioela, Copa haur da Testamentu berria ene odolean: haur eguiçue, noiz-ere edanen baituçue, ene memoriotan.

26 Ecen noiz-ere ianen baituçue ogui haur, eta copa haur edanen, Iaunaren herioa denuntiaturen duçue, dathorreno.

*Ioan. 6. 54.*

27 *Halacotz, norc-ere ianen baitu ogui haur, edo edanẽ Iaunaren copá indignoqui, hoguendũ içanen da Iaunarẽ gorputzarẽ eta odolaren

*2. Cor. 13. 5.*

28 *Phoroga beça bada batbederac bere buruä, eta hunela ogui hartaric ian beça, eta copá hartaric edan.

29 Ecen iaten eta edaten duenac indignoqui, bere condemnationea iaten eta edaten du, discernitzen eztuelaric Iaunaren gorputza.

30 Halacotz *da* çuen artean anhitz infirmoric, eta eriric, eta lo daunça anhitz.
31 Ecen ſegur baldin gure buruäc iugea baguin ça, ez guintezque puni.
32 Baina punitzen garenean, Iaunaz inſtruitzen gara: munduarequin condemna ezgaitecençát.
33 Bada, ene anayeác, biltzen çaretenean iatera batac bercea iguriqui eçaçue.
34 Eta baldin nehor goſſe bada, etchean ian beça: condemnationetan bil etzaiteztençát. Eta garaitico gaucéz, nathorrenean ordonaturen duquet.

CAP. XII.

*1 Dohain ſpiritualéz. 12 Anhitz membro gorputz batetan. 27 Eliçá, Chriſten gorputz.*

1 DOhain ſpiritualez dẽ becembatean, anayeác, eztut nahi ignora deçaçuen.
2 Badaqui çue ecen Gentil içan çaretela, eta idola mutuén onduan guidatzen cineten beçala laſterca cinabiltzatela.
3 Halacotz iaquin eraciten drauçuet, * ecen Iaincoaren Spirituaz minço denec batec-ere, eztuela erraiten Ieſus maledictione dela: * eta nehorc ecin derraqueela Ieſus *dela* Iaun, Spiritu sainduaz baicen.

Marc.9.39
Leben.8.6.
ioan.13.12
philip.2.10

4 Eta dohainén differentiác badirade, baina Spiritu ber-bat *da*:

5 Adminiſtrationén differentiac-ere badirade: baina Iaun ber-bat:
6 Operationén differentiác-ere badirade: baina Iainco ber-bat da, ceinec eguiten baitugucia gucietan.
7 Baina batbederari emaiten çayó ſpirituaren manifeſtationea probetchatzeco.
8 Ecen batari ſpirituaz emaiten çayó ſapientiataco hitza, eta berceari eçagutzetaco hitza, ſpiritu beraren arauez:
9 Eta berceari fedea, Spiritu harçaz beraz: eta berceari ſendatzeco dohainac Spiritu harçaz beraz.
10 Eta berceari, verthutén operationeac: eta berceari prophetiá: eta berceari, ſpirituẽ diſcretioneac: eta berceari, lengoagén diuerſitateac: eta berceari, lengoagén interpretationea.
*Rom.12.3. Eph.4.6.*
11 * Baina gauça hauc guciac eguiten ditu, Spiritu bat harc eta berac, diſtribuituz *hec* particularqui batbederari, nahi duen beçala.
12 Ecen gorputza bat den beçala, eta baitu anhitz membro, baina gorputz batetaco membro guciac, anhitz diradelaric, gorputz bat dirade: hala *da* Chriſt-ere.
13 Ecen Spiritu batez gu gucioc batheyatu içan gara gorputz bat içateco, bada Iuduric, bada Grecoric, bada ſclaboric, bada libreric: eta guciac edaran içan gara Spiritu ber batez.
14 Ecen gorputza-ere ezta membro bat, baina anhitz.
15 Baldin erran badeça oinac, Eznaiz eſcua,

eznaiz gorputzeco:ezta halacotz gorputzeco?
16 Eta baldin erran badeça beharriac, Eznaiz beguia, eznaiz gorputzeco: ezta halacotz gorputzeco?
17 Baldin gorputz guciá beguia *bada*,non *içanen da* ençutea? baldin gucia ençutea *bada*,non *içanen da* ſenditzea?
18 Baina orain eçarri vkan du Iaincoac membroetaric batbedera gorputzean, nahi vkan duen beçala.
19 Ecen baldin guciac membrobat balirade non *liçateque* gorputza?
20 Baina orain anhitz dirade membroac, badaric-ere gorputzbat.
21 Eta ecin beguiac derraqueo eſcuari, Hire beharric eztiat: edo berriz buruäc oiney, Çuen beharric eztut.
22 Baina are guehiago *dena* gorputzeco mẽbro infirmoen irudi dutenac,neceſſarioenac dirade.
23 Eta gorputzeco *membro* deshoneſtén diradela vſte dugunac,ohoratuquienic eſtaltzen ditugu: eta gure *membro* deshoneſtenéc, ornamẽdu guehienic duté.
24 Eta gutan honeſt diraden partéc *ornamendu* beharric eztute: baina Iaincoac moderatu vkan du gorputza batean, falta çuenari ohore guehienic emanez:
25 Gorputzean diuiſioneric eztençát, baina mẽbroéc batac berceagatic anſia berbat dutén.
26 Eta den membro batec cerbait ſuffritzen

duen, membro guciéc harequin suffritzẽ duté: edo den membrobat ohoratzen den, membro guciac alegueratzen dirade elkarrequin.

27 Bada çuec çarete Christen gorputz, eta mẽbro partez.

Eph. 4. 11. 28 *Eta batzu eçarri vkan ditu Iaincoac Eliçán, lehenic Apostoluac, guero Prophetác, hereneã Doctorac: eta guero verthuteac: guero sendatzecó dohainac, aiutác, gobernamẽduac, lengoagén diuersitateac.

29 Ala guciac *dirade* Apostolu? ala guciac Propheta? ala guciac doctor? ala guciac verthutedũ?

30 Ala guciéc badute sendatzeco dohaina? ala guciac lengoage diuersez minço dirade? ala guciéc interpretatzen dute?

31 Baina çareten dohain excellentenén guthicioso: eta oraino bide excellentagobat eraçutsiren drauçuet.

CAP. XIII.

*1 Charitatea gabe deus probetchuric ez. 4 Charitatearen fructuac eta eguimbidea. 11 Guiço naren eta haourraren iugemendua. 12 Ikustea mirailean, eta beguithartez beguit harte.*

1 BAldin guiçonén eta Ainguerueñ lengoagez minça banadi, eta charitateric eztudan, eguin naiz cobre soinu eguiten duenaren, edo cymbala dindatzen duenaren *pare.*

2 Eta baldin banu prophetiazco *dohaina*, eta naquizquiã mysterio guciac eta scientia gucia:

eta nuen fede gucia, * hambat non mendiac transporta nitzan, eta charitateric eztudan, deus eznaiz.

Mat. 17. 20.

3 Eta baldin distribui baditzat neure on guciac paubrén hatzeco, eta baldin emã badeçat neure gorputza erre içateco, eta charitateric eztudan, etzait deus probetchatzen.

4 Charitatea patient da, benigno da, charitatea ezta inuidioso: charitateac eztu insolentiaric, *eta* ezta hançen:

5 Eztu deshonestateríc eguiten, eztabila bere probetchuén ondoan, ezta despitatzen: eztu gaitzic pensatzen:

6 Ezta bidegabeaz alegueratzen, baina alegueratzen da eguiáz.

7 Gauça guciac pairatzen ditu, gauça guciac sinhesten ditu, gauça guciac speratzen ditu, gauça guciac suffritzen ditu.

8 Charitatea nehoiz-ere ezta erorten: baina are prophetiác abolituren dirade, eta lengoagéc fin harturen duté, eta scientiá abolituren da.

9 Ecen partez eçagutzen dugu eta partez prophetizatzen.

10 Eta perfectionea ethorri datenean, orduan partez dena abolituren date.

11 Haourra nincenean, haour anço minço nincén, haour anço iugeatzen nuen, haour anço pẽsatzen nuen: baina guiçon eguin naicenean, abolitu vkan ditut haourtassuneco manerác.

12 Ecen orain mirail batez ikusten dugu ilhunqui: baina orduã beguithartez beguitharte ikus-

ſiren dugu:orain eçagutzē dut partez,baina orduan eçaguturē dut eçagutu-ere naicén beçala.
13 Bada orain badaude hirur gauça hauc, fedea, ſperançá, charitatea : baina hautarico handiena charitatea *da*.

CAP. XIIII.

*1 Prophetizatzea edificationetaco. 6 Reuélationea, Scientiá. Prophetiá. Doctriná. 12 Dohainéz Eliçaren edificationetan vſatzeco. 15 Spirituzco eta adimenduzco othoitzá. 26 Eliçán gucia edificationetan eguiteco. 34 Emazteac Eliçán ichilic egoiteco. 40 Honeſtatea eta ordenançá.*

1 CArreitzate chariteari, eta çareten dohain ſpiritual guthicioſo, baina guehienic prophetiza deçaçuen.
2 Ecen lēgoage *arrotzez* minço dena etzaye guiçoney minço, baina Iaincoari : ecen nehorc eztu ençuten, eta ſpirituz myſterioac erraiten ditu.
3 Baina prophetizatzen duena, guiçoney minço çaye edificationetan, eta exhortationetan, eta conſolationetan.
4 Lengoage *arrotzez* minço denac, bere buruä edificatzen du : baina prophetizatzen duenac, Eliçá edificatzen du.
5 Nahi dut bada çuec gucioc lengoage *diuerſez* minça çaitezten, baina nahiago prophetiza deçaçuen ecen handiago da prophetizatzē duena ecen ez lēgoage *diuerſez* minço dena, baldin in-

terpretatzen ezpadu, Eliçác edificatione har deçançát.
6 Bada orain, anayeác, baldin banathor çuetara lẽgoage *arrotzez* minço naicela, cer probetchu eguinen drauçuet: baldin minça ezpanaquiçue edo reuelationez, edo ſcientiaz, edo prophetiaz, edo doctrinaz?
7 Eta gauça arima gabe ſoinu emaiten dutenec-*ere* edo *den* chirula, edo harpa, baldin *cerbait* differentia tonuz ezpademate, nolatan eçaguturen da chiruláz edo harpáz ioiten dena?
8 Ecen baldin ſoinu iaquin-bat eman ezpadeça trompettác, nor preparaturen da bataillara?
9 Hala çuec-ere baldin adi daitequeen hitza mihiaz pronuntia ezpadeçaçue, nolatan adituren da erraiten dena? ecen airera minçaçale içanen çarete.
10 Hambat (heltzen ohi den beçala) ſoinu mota da munduan, eta batre ezta muturic.
11 Beraz baldin ezpadaquit vozaren verthutea, içanẽ natzayó minço denari barbaro: eta minço çaitadana barbaro içanen çait.
12 Hala çuec-ere dohain ſpiritual guthicioſo çaretenaz gueroz, çarreitzate *hetan* abundoſo içateari Eliçaren edificationetan.
13 Halacotz lengoage arrotzez minço denac othoitz begui interpreta ahal deçançát.
14 Ecen baldin lengoage *arrotzez* othoitz eguiten badut, ene ſpirituac othoitz eguiten du: baina ene adimendua fructu gabe da.
15 Cer bada? othoitz eguinen dut ſpirituz, bai-

na othoitz eguinen dut adimenduz-ere : cantaturen dut ſpirituz, baina cãtaturen dut adimenduz-ere.
16 Bercela, baldin benedica badeçac ſpirituz, ignorantaren lekua daducanac nolatán erranen du Amen hire remercia menduaren gainera ? ecen *hic* cer erraiten duán etzeaquic.
17 Ecen hic bay eſquerrac emaiten dituc, baina bercea eztatec edificatzen.
18 Eſquerrac emaiten drauzquiot neure Iaincoari, ceren çuec gucioc baino guehiago lengoagez minço bainaiz.
19 Baina Eliçán nahiago naiz borz hitz neure adimenduz minçatu, berceac-ere inſtrui ditzadançát, ecen ez hamar milla hitz lengoage *arrotzez*.
Matt.18.3 20 *Anayeác, etzaretela adimenduz haour: baina çareten malitiaz haour, eta adimenduz çareten guiçon eguinaç.
Eſa.28.11. 21 Leguean ſcribatua da, *Halacotz berce lengoagetaco *gendez*, eta ezpain arrotzez minçaturen natzayo populu huni : eta are halatan eznaute ençunen, dio Iaunac.
22 Bada lengoage *arrotzac* dirade ſeignaletan, ez ſinheſtẽ duteney, baina infideley: baina prophetiá, ez infideley, baina ſinheſten duteney.
23 Bada baldin Eliça gucia bil badadi batetara, eta guciac lẽgoage *arrotzez* minça ditecen, eta ignorantac, edo infidelac ſar ditecen: eztuté erranen, ecen erhotzen çaretela?
24 Baina baldin guciéc prophetizatzen badu-

té, eta sar dadin cembeit infidel edo ignorant, vençutzen da guciéz, eta iugeatzen da guciéz.

25 Eta halatan haren bihotzeco secretuac manifestatzen dirade: eta hala ahoz beheraturic adoraturen du Iaincoa, declaratzen duela ecen Iaincoa eguiazqui çuetan dela.

26 Cer da bada anayeac? biltzen çareten oroz, çuetaric batbederac psalmu du, doctrina du, reuelatione du, lengoage du, interpretatione du, gauça guciac edificationetan eguin bitez.

27 Ezpa lẽgoage *arrotzez* edocein minço bada, biguez edo gorena hirurez *eguin bedi*, eta aldizca: eta batec interpreta beça.

28 Eta baldin interpretaçaleric ezpada, ichil bedi Eliçán *lengoage arrotzez minço dena*, eta bere buruäri minça bequió eta Iaincoari.

29 Eta biga edo hirur Propheta minça bitez, eta bercéc iugea beçate.

30 Eta baldin *cerbait* berce iarriric dagoen bati reuelatu içan baçayó, lehena ichil bedi.

31 Ecen guciéc bata berceare ondoan prophetiza ahal deçaqueçue, guciéc ikas deçatéçát, eta guciac consola ditecençát.

32 Eta Prophetén spirituac Prophetén suiet dirade.

33 Ecen Iaincoa ezta confusionezco *Iainco*, baina baquezco, saindnén Eliça gucietan *agueri den* beçala.

34 * Çuen emazteac Elicetan ichilic beude: ecen etzaye permettitzen minçatzera: baina bire suiet, *Legueac-ere erraiten duen beçala.

1.Tim.2.12.
Gen.3.16.

35 Eta baldin cerbait ikaſſi nahi badutẽ, etcheã bere ſenharrac interroga bitzate: ecen deshoneſt da emaztén Eliçán minçatzea.

36 Ala çuetaric Iaincoaren hitza ilki içan da? ala çuetara beretara heldu içan da?

37 Baldin cembeitec vſte badu Propheta dela, edo ſpiritual, eçagut beça ecẽ ſcribatzen drauzquiçuedan gauçác Iaincoaren manamendu diradela.

38 Eta ignorant dena, ignorant biz.

39 Halacotz, anayeác, çareten prophetizatzera guthicioſo, eta lengoage *arrotzez* minçatzea ezteçaçuela empatcha.

40 Baina gauça guciac bidezqui eta ordenançaz eguin bitez.

. CAP. XV.

*1 Paulec cer Euangelio predicatu. 3 Chriſten herioa eta reſurrectionea. 9 Paul perſecutaçale eta Apoſtolu. 22 Reſurrectionea Chriſtez. 45 Adam lehena eta guerocoa. 56 Herioaren eztena. 57 Victoriá. 58 Fermetatea eta perſeuerançá.*

*Gal.1.11.* 1 * BAda auiſatzen çaituztet, anayeác, declaratu drauçuedan Euangelioaz, cein recebitu baituçue, ceinetan egoiten-ere baitzarete.

2 Ceinez ſaluatzen-ere baitzarete, baldin orhoit baçarete cer maneraz hura denũtiatu drauçuedan: baldin alfer ſinhetſi vkan ezpaduçue.

3 Ecen eman drauçuet recebitu-ere vkan nuena: nola Chriſt hil içan den gure bekatuacgatic,

*Scripturén araura: *Esa.53.5.*

4 *Eta nola ohortze eta resuscitatu içan den *Ionas 2.1.* hereneco egunean, Scripturén araura:

5 *Eta nola ikussi içan den Cephasez, eta guero hamabiéz. *Ioan 20.19*

6 Gueroztic ikussi içan da borz ehun anayez baino guehiagoz aldi batez: ceinetaric anhitz vici baitirade oraindrano, eta batzu lokartu-ere içan dirade:

7 Gueroztic ikussi içan da Iacquesez: eta guero Apostolu guciez.

8 *Eta gucietaco azquenenic, aburtoin ançocoaz ikussi içan da niçaz-ere. *Act.9.4.*

9 *Ecen ni naiz Apostoluetaco chipiena, Apostolu deithu içateco digne eznaicenor, ceren persecutatu vkan baitut Iaincoaren Eliçá. *Ephe.3.8.*

10 Baina Iaincoaren gratiaz naiz naicena: eta haren ni baitharaco gratiá, ezta vano içan, aitzitic hec guciac baino guehiago trabaillatu içan naiz: badaric-ere ez ni, baina Iaincoaren gratia enequin *dena*.

11 Beraz, bada nic, bada hec, hunela predicatzen dugu, eta hunela sinhetsi vkan duçue.

12 Eta baldin Christ predicatzen bada ecen hiletaric resuscitatu içan dela, nola erraiten dute batzuc çuen artean, ecen hilén resurrectioneric eztela?

13 Ecen baldin hilén resurrectioneric ezpada, Christ-ere ezta resuscitatu içan.

14 Eta baldin Christ resuscitatu içan ezpada, beraz vano *da* gure predicationea, eta çuen fe-

dea-ere vano *da*.

15 Eta erideiten-ere bagara Iaincoaren teſtimonio falſu: ecen teſtificatu vkan dugu Iaincoaz, nola reſuſcitatu vkan duen Chriſt, cein ezpaitu reſuſcitatu, baldin hilac reſuſcitatzen ezpadirade.

16 Ecen baldin hilac reſuſcitatzen ezpadirade, Chriſt-ere ezta reſuſcitatu içan.

17 Eta baldin Chriſt reſuſcitatu içan ezpada, vano *da* çuen fedea: oraino çuen bekatuetan çarete.

18 Beraz Chriſtan lokartu diradenac-ere, galdu içan dirade.

19 Baldin vicitze hunetan ſolamẽt Chriſt baithan ſperança badugu, guiçon gucietaco miſerablenac gu gara.

20 Baina orain, Chriſt reſuſcitatu içan da hiletaric: *eta* *lokartu içan diradenén primitia eguin içan da.

*Col.1.18. apoc.1.15.*

21 Ecen herioa guiçon batez denaz gueroz, hilén reſurrectionea-ere guiçon-batez da.

22 Ecen nola guciac Adamtan hiltzen baitirade, hala Chriſtan-ere viuificaturẽ dirade guciac.

23 *Baina batbedera bere ordenançán: primitia Chriſt, guero Chriſten diradenac, haren aduenimenduan.

*1.Theſſ.4.15.*

24 Guero *içanen da* fina, eman drauqueonean reſumá Iainco Aitari: abolitu duqueenean principaltaſſun gucia, eta puiſſãça eta bothere gucia.

25 Ecen behar du harc regnatu, *etſay guciac bere oinén azpian eçarri dituqueeno.

*Pſal.110.1. act.2.34. hebr.1.13. eta 10.13.*

26 Eta azquen etſay deſeguinẽ dena herioa *da*.

27 *Ecen gauça guciac ſuiet eguin vkan ditu haren oinén azpico (baina erraiten duenean, ecen gauça guciac haren ſuiet eguin içan diradela, agueria da ecen gauça guciac harẽ ſuiet eguin dituena reſeruatua dela.)

*Pſal.8.7 hebr.2.8.*

28 Eta gauça guciac hari ſuiet eguin çaizqueonean, orduan Semea bera-ere ſuiet eguinẽ çayó gauça guciac hari ſuiet eguin drauzquionari, Iaincoa dençat gucia gucietan.

29 Bercela cer eguinen duté hiltzat batheyatzen diradenéc, baldin guciz hilac reſuſcitatzen ezpadirade? eta cergatic batheyatzen dirade hiltzat?

30 Eta cergatic gu periletan gara ordu oroz?

31 Egunetic egunera hiltzen naiz, gure gloria Ieſus Chriſt gure Iaunean dudanaz.

32 Baldin guiçonaren arauez beſtién contra bataillatu içan banaiz Epheſen, cer probetchu dut, baldin hilac reſuſcitatzen ezpadirade? *Ian deçagun eta edan deçagun: ecen bihar hilen gara.

*Eſa.22.13. ſap.2.6.*

33 Etzaiteztela ſeduci. Propos gaichtoéc corrumpitzen dituzte conditione onac.

34 Iratzar çaiteztez iuſtoqui *vicitzera*, eta bekaturic eztaguiçuela: ecen batzuc Iaincoaren eçagutzea eztuté: *çuen* ahalquetan erraitẽ drauçuet.

35 Baina erranen du cembeitec, Nola reſuſcitatzen dirade hilac? eta nolaco gorputzetan ethorriren dirade?

36 Erhoá,hic ereiten duána,eztuc viuificatzen, baldin hil ezpadadi.

37 Eta ereiten duána,eztuc gorputz ſorthuren dena ereiten,baina bihi hutſa, nola heltzen baita,oguiarena,edo cembeit berce *bihirena*.

38 Baina Iaincoac emaiten diraucac gorputza nahi duen beçala,eta hacietaric batbederari ceini bere gorputz propria.

39 Haragui gucia ezta haragui ber-bat: baina berce da guiçonén haraguia, eta berce,abrē haraguia: eta berce arrainena: eta berce choriena.

40 Eta *badirade* gorputz cerucoac,eta badirade gorputz lurrecoac:baina berce da cerucoén gloriá,eta berce lurrecoena.

41 Berce *da* iguzquiarē gloriá, eta berce ilharguiaren gloriá, eta berce içarren gloriá: ecen içarra içarraganic different da gloriatan.

42 Hala *içanen da* hilén reſurrectionea-ere:*gorputza* ereiten da corruptionetan, reſuſcitatzen da incorruptionetan.

43 Ereiten da deſohorezco, reſuſcitatzen da glorioſo: ereiten da infirmo, reſuſcitatzen da botheretſu.

44 Ereiten da gorputz ſenſual,reſuſcitatzen da gorputz ſpiritual:bada gorputz ſenſuala,eta bada gorputz ſpirituala.

*Gene.2.7.* 45 Scribatua-ere den beçala, * Eguin içan da Adam lehen guiçona arima vicitan: Adam guerocoa ſpiritu viuificaçaletan.

46 Baina ſpiritual *dena* ezta lehen, baina ſenſual *dena*: guero ſpiritual *dena*.

47 Lehen

47 Lehen guiçona lurretic, lurreco: eta bigarren guiçona, *cein baita* Iauna, cerutic.
48 Lurrecoa nolaco, halaco lurreco diradenac-ere: eta cerucoa nolaco, halaco cerucoac-ere.
49 Eta lurrecoaren imaginá ekarri vkan dugun beçala, ekarriren dugu cerucoaren imagina-ere.
50 Huná cer diodan, anayeác, ecen haraguiac eta odolac Iaincoaren resumá hereta ecin deçaquetela: eta corruptioneac eztuela incorruptionea heretatzen.
51 Huná, mysteriobat erraiten drauçuet, Guciac behinçat lokarturen ez gara, baina guciac bay muthaturen:
52 Moment batez *eta* begui keinu batez, *azquen trompettán (ecen ioren du trompettác) eta hilac resuscitaturen dirade incorruptible, eta gu muthaturen gara.

Matth.24.31.
1.thess.4.16

53 Ecen behar da corruptible haur vezti dadin incorruptionez, eta mortal haur vezti dadin immortalitatez.
54 Bada corruptible haur veztitu datenean incorruptionez, eta mortal haur veztitu datenean immortalitatez, orduan eguinen da scribatu dena, *Iretsi içan da herioa victoriatara.

Ose.13.14.
hebr.2.14.

55 O herioá, non da hire victoria? o sepulchreá, non da hire eztena?
56 Bada herioaren eztena, bekatua *da*: eta bekatuaren botherea, Leguea.
57 *Baina esquer Iaincoari, ceinec victoria eman baitraucu Iesus Christ gure Iaunaz.

1.Ioan 5.5.

58 Halacotz, ene anaye maiteác, çareten fermu, conſtant, abundoſo Iaunaren obrán bethiere, daqui çuelaric ecen çuen trabaillua eztela vano *gure* Iaunean.

CAP. XVI.

*1 Paubren collectéz. 5 Macedonia. 8 Mendecoſte. 10 Timotheo. 12 Apollo. 13 Veillatzeco. Fedean egoiteco. 14 Charitatea. 19 Aſiaco Eliçác.*

1 SAinduēdaco eguiten diraden collectéz den becembatean, nola Galatiaco Elicey ordenatu baitrauet, hala çuec-ere eguiçue.

2 Aſteco lehen *egun* oroz çuetaric batbederac bere baithan eçar deçan appart, Iaincoaren benignitatez ahal deçana gordatzē duela: nathorren orduan collectác eguin eztitecençát.

3 Eta guero arriua nadinean, nor-ere çuec letraz approbaturen baitituçue, hec igorriren ditut çuen liberalitatearen eramaitera Ieruſalemera.

4 Eta baldin premiaric bada neuror-ere ioan nadin, enequin ioanen dirateque.

5 Ethorriren naiz bada çuetara, Macedonia iragan duquedanean (ecen Macedonian iraganen naiz.)

6 Eta çuec baithan aguian egonen naiz, edo neguä iraganen-ere: çuec guida neçaçuençát norat-ere ioanen bainaiz.

7 Ecen etzaituztet orain iragaitez ikuſſi nahi:

baina ſperança dut cerbait dembora egonen naicela çuec baithan, baldin Iaunac permetti badeça.

8 Baina egonen naiz Epheſen Mendecoſte arteno.

9 Ecen bortha handibat eta efficaciotacobat irequi içan çait, baina etſay anhitz.

10 Eta baldin ethor badadi Timotheo, gogoauçue ſegur den çuec baithan: ecen Iaunaren obrá obratzen du nic-ere beçala.

11 Bada nehorc ezteçala hura menoſprecia, baina guida eçaçue baquerequin, dathorrençát enegana, ecen haren beguira nago anayequin.

12 Eta anaye Apolloz den becembatean, anhitz othoitz eguin draucat ioan ledin çuetara anayequin: baina neholetan-ere eztu vkā vorondateric orain ioaiteco: baina ethorriren da opportunitatea duenean.

13 Veilla eçaçue, çaudete fedean fermu, valentqui perporta çaitezte, fortifica çaitezte.

14 Çuen eguiteco guciac charitaterequin eguin bitez.

15 Eta othoitz eguiten drauçuet, anayeác, badaquiçue Eſtebenen familiá Achaiaco primitién artean dela, eta ſainduén cerbitzura bere buruäc eman dituztela:

16 Çuec-ere çareten ſuiet halacoén, eta gurequin languiten eta trabaillatzen ari den guciaren.

17 Boz naiz bada Eſtebenen eta fortunaten eta Achaicoren ethorteaz, ceren çuen abſentiá

hec ſupplitu vkan baituté.

18 Ecen recreatu vkan dituzte ene ſpiritua eta çuena. Eçagut itzaçue bada halaco diradenac.

19 Salutatzen çaituztez Aſiaco Elicéc. Salutatzen çaituztez *gure* Iaunean anhitz, Aquilac eta Priſcillac, bere etcheco Eliçarequin.

Rom.16.16 / 2.cor.13.12 / 1.pier.5.14

20 Salutatzen çaituztezanaye guciéc. *Saluta eçaçue elkar pot ſaindu batez.

21 Ene Paulen eſcuazco ſalutationea.

22 Baldin cembeit *bada* Ieſus Chriſt Iaunari on eztaritzanic, biz anathema, maran-atha.

23 Ieſus Chriſt *gure* Iaunaren gratiá dela çuequin.

24 Ene charitatea çuequin gucioquin Ieſus Chriſt *Iaunean*, Amen.

*Corinthianoetaratco lehena ſcribatu içan da Philippeſtic Eſtebenequin eta Fortunatequin eta Achaicorequin eta Timotheorequin.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN CORINTHIANOETARATCO EPISTOLA BIGARRENA.

## CAP. I.

1 *Sainduac.* 8 *Paulen Asiaco tribulationea.* 11 *Orationezco aiutá.* 12 *Paulec nola conuersatu.* 14 *Haren gloriá.* 15 *Cergatic Corinthera eztén itzuli.* 22 *Spirituaren erréſa.*

1 PAVLEC Ieſus Chriſten Apoſtolu Iaincoaren vorondatez *denac*, eta Timotheo anayeac, Iaincoarē Eliça Corinthen denari, Achaia gucian diraden ſaindu guciequin:

2 Gratia *dela* çuequin eta baquea Iainco gure Aitaganic, eta Ieſus Chriſt Iaunaganic.

3 *Laudatu *dela* Iaincoa *cein baita* Ieſus Chriſt gure Iaunaren Aita, miſericordién Aita eta conſolatione guciaren Iaincoa, Ephe.1.3. 1.pier.1.3

4 Gure tribulatione gucian conſolatzen gaituena: conſola ahal ditzaguncát cer-ere tribulationetan diradenac, gueuroc Iaincoaz conſolatzen garen conſolatione beraz.

5 Ecen nola Chriſten ſuffrimenduac gutan abundatzen baitirade, hala gure conſolationea-

ere abundatzen da Chriſtez.
6 Eta edo affligitzen bagara, çuen conſolationeagatic *da*, eta guc-ere ſuffritzen ditugun molde bereco ſuffrimenduén patientián eguiten den ſaluamenduagatic: edo conſolatzen bagara, çuen conſolationeagatic *da* eta ſaluamenduagatic.
7 Eta gure ſperança çueçaz *duguna* fermu da, daquigularic ecen nola ſuffrimenduetan participant baitzarete, hala conſolationean-ere *içanen çaretela*.
8 Ecen nahi dugu daquiçuen, anayeác, gure affliĉtione Aſian heldu içan çaicunaz, ecen cargatu içan garela exceſſiuoqui ahalaz garaitic, hambat non herſturatan içanez etſi baiquenduen viciaz-ere.
9 Baina gueuroc gure baithan heriotaco ſententia vkan dugu: gure baithan fida ezquentecençát, baina hilac reſuſcitatzen dituen Iaincoa baithan:
10 Ceinec hain herio handitaric deliuratu baiquaitu, eta deliuratzen: cein baithan ſperança baitugu ecen oraino-ere deliuraturen gaituela.
Rom.15. 30.
11 *Çuec-ere aiutatzen gaituçuelaric guregatic *eguinen duçuen* orationeaz: anhitz perſonaren reſpeĉtuz eguin çaicun dohainaz, anhitzez guregatic eſquerrac renda ditecençát.
12 Ecen gure gloriatzea haur da, gure cõſcientiaren teſtimoniagea ecen Iaincoaren ſimplicitaterequin eta puritaterequin, ez haraguiaren ſapientiarequin, baina Iaincoaren gratiarequin

conuersatu vkan dugula munduan, eta principalqui çuec baithan.
13 Ecen scribatzen drauzquiçuegun gauçác, eztirade iracurtzen edo eçagutzen-ere dituçuenez berce:eta sperança dut finerano-ere eçaguturen dituçuela.
14 Nola eçagutu-ere baiquaituçue parte,ecen çuen gloriatze garela,çuec-ere gurea beçala Iesus Iaunaren egunecotzat.
15 Eta confidança hunetan nahi nincén lehen çuetara ethorri, gratia doblea cindutençát:
16 Eta çuetaric Macedoniarat iragan, eta harçara Macedoniaric ethorri çuetara, eta çueçaz guida nendin Iudeara.
17 Bada haur deliberatzen nuenean arintassunez vsatu vkan dut?ala deliberatzen ditudan gauçác, haraguiaren arauez deliberatzen ditut, hala non ni baithan den Bay eta Ez?
18 Aitzitic Iainco fidelac *badaqui* ecẽ ene çuetaratco hitza eztela içan Bay eta Ez.
19 Ecen Iaincoaren Seme Iesus Christ guçaz çuen artean predicatu içan dena, niçaz eta Syluanoz eta Timotheoz,ezta içan Bay eta Ez,baina Bay hartan içan da:
20 (Ecen Iaincoaren promes guciac hartan Bay *dirade*, eta hartan *dirade* Amen) Iaincoaren gloriatan guçaz.
21 Bada cõfirmatzen gaituena çuequin Christ *Jaunean* eta vnctatu gaituena Iainçoa *da*:
22 Ciguilatu-ere gaituena, eta Spirituaren erréfac gure bihotzetan eman drauzquiguna.

23 Nic bada Iaincoa dut teſtimonio deitzen neure *arimaren gain, ecen çuen guppidaz, oraino eznaicela ethorri Corinthera.

*arimaren, viciaren.

24 Ez dominatzen dugulacotz çuen fedearen gainean, baina çuen bozcarioaren aiutaçale garelacotz: ecen fedez çutic çaudete.

CAP. II.

*1 Excõmunicatu içan cen Corinthianoaz. 11 Satanen entrepreſác. 12 Troas. 13 Tite. 16 Herio eta vicitze vſſain.*

1 BAina haur neuror baithã deliberatu vkã dut, çuetara triſtitiarequin berriz ez ethortera.

2 Ecen baldin nic contriſta baçaitzatet, nor da ni aleguera nençaqueenic, niçaz cõtriſtatu liçatequeen bera baicen?

3 Eta haur bera ſcribatu vkan drauçuet, ethor nadinean triſtitiaric eztudançát alegueratu behar nincenetaric: çueçaz gucioz fidaz ecen ene alegrançá, çuen guciona dela.

4 Ecen affliĉtione eta bihotz herſtura handitan ſcribatu drauçuet, anhitz nigar chortarequin: ez contriſta cindeiztençát, baina eçagut cineçatençát çuetara dudan charitate gucizco abundanta.

5 Eta baldin norbeit triſtitiaren cauſa içan bada, eznau ni contriſtatu, baina aldez (*hura* cargago ezteçadan) çuec gucioc.

6 Aſco du harc anhitzez *eguin içan çayon* reprotchu hunez.

7 Hala non contrariora barka diecoçuen aitzitic, eta consola deçaçuen, tristitiaren handieguiz irets eztadinçát hura.
8 Harren othoitz eguiten drauçuet, confirma deçaçuen hura baithara charitatea.
9 Ecen fin hunetacotz scribatu-ere drauçuet, eçagut neçançát çuen experientiá, *eya* gauça gucietara obedient çaretenez.
10 Eta cerbait barkatzen draucaçuenari, nic-ere *barkatzen draucat*: ecen nic-ere baldin cerbait barkatu badut, barkatu draucadanari çuengatic *eguin draucat* Christen beguitharte aitzinean, Satanez ardiets ezgaitecençát.
11 Ecen haren entrepresác badaquizquigu.
12 Goiticoz, ethorriric Troasera Christen Euangelioagatic, borthá irequi baçaitadán-ere Iaunaz:
13 Eztut vkan paussuric neure spirituan, ceren ezpaineçan eriden Tite neure anayea: baina hetaric congit harturic, ioan nēdin Macedoniarát.
14 Esquer bada Iaincoari bethi Christean triumpha eraciten draucunari: eta bere eçagutzearen vssaina eçagut eraciten draucunari leku gucietan.
15 Ecē Christen vssain ona gara Iaincoagana, saluatzen diradenetan, eta galtzen diradenetan:
16 Iaquiteco da, hautan, herio vssain heriotaracotz: eta hetan, vicitze vssain vicitzetaracotz: eta gauça hautacotzat nor *da* sufficientic?
17 *Ecen eztugu, anhitzec beçala, traffiquic eguiten Iaincoaren hitzaz, aitzitic integritatez

*Berriz.4.8*

beçala, aitzitic Iaincoaganic beçala Iaincoaren aitzinean, Chriſtez minço gara.

## CAP. III.

*1,3 Chriſten eta Paulen epiſtolá. 5. Penſamendu onac Iaincoaganic heldu. 6 Letrá. Spirituá. 7 Leguearen eta Euangelioaren gloriá. 14 Iuduén itſutaſſuna. 17 Iaunaren Spiritua. Libertatea.*

1 HAtſen gara berriz gure buruén gõmendatzen? ala behar dugu batzuc beçala, epiſtola gommendagarriric çuetara, edo çuetaric gommendagarriric?

2 Gure epiſtolá çuec çarete, gure bihotzetan ſcribatua, cein eçagutzen eta iracurtzen baita guiçon guciéz.

3 Agueri den becembatean ecen Chriſten epiſtola guçaz adminiſtratua çaretela, ſcribatua ez tintaz, baina Iainco viciaren Spirituaz: ez harrizco tauletan, baina bihotzeco taula haraguizcoetan.

4 Eta halaco confidança dugu Chriſtez Iaincoa baithan.

5 Ez ſufficient garelacotz gure buruz cerbaiten penſatzeco, gueurorganic beçala: baina gure ſufficientiá Iaincoaganic *da*.

6 Ceinec Teſtamentu berrico miniſtre ſufficient-ere eguin baiquaitu, ez letraren, baina Spirituaren: ecen letrác hiltzen du, baina Spirituac

viuificatzen du.

7 Eta baldin heriotaco ministerioa letraz harrietan moldatua içan bada gloriosо, hambat nõ Israeleco haourréc ecin behá baitzeçaqueten Moysesen beguithartera, haren beguitharteco gloria fin vkan behar çuenagatic:

8 Nolatan ezta Spirituaren ministerioa gloriosoago içanen?

9 Ecen baldin condemnationetaco ministerioa glorioso *içan bada*: iustitiataco ministerioac anhitzez iragaitenago du gloriaz.

10 Ecen glorificatu içan dena-ere, ezta glorificatu içan respectu hunez, *erran nahi da*, excellentago den gloriaren causaz.

11 Ecen baldin fin hartu behar çuena glorioso içan bada, vnguiz gloriosoago da dagoena.

12 Beraz hunelaco sperançá dugunaz gueroz, minçatzeco libertate handiz vsatzen dugu.

13 * Eta ez *gara* Moysez beçala *ceinec* estalquia emaiten baitzuen bere beguitharte gainean, Israeleco haourréc abolitu behar cenaren finera beha ezleçatençát.

*Exod.34.35.*

14 Bada, hayén adimenduac gogortu içan dirade: ecen egungo egunerano estalqui bera dago Testamentu çaharreco lecturán kendu gabea (cein Christez kencen baita)

15 Baina egungo egun hunetarano Moyses iracurtzen deneã, estalquia hayén bihotz gaineã dago.

16 Baina Iaunagana conuertitu datequeenean kenduren da estalquia.

Ioan.4.24. 17 * Eta Iauna Spiritu da: eta Iaunaren Spiritua non, libertatea han.

18 Bada gu gucioc beguithartea aguerturic Iaunaren glorián miratzen garela, imagina berera transformatzen gara gloriataric gloriatara, Iaunaren Spirituaz beçala.

## CAP. IIII.

*1 Paulen predicationea eta Euangelioa. 3 Euangelioa batzuetara eſtalia. 5 Paulec Chriſt predicatzen. 6 Euangelioaren eçagutzea nondic. 16 Campoco eta barneco guiçona.*

HAlacotz, miniſterio haur dugularic recebitu dugun miſericordiarẽ arauez, ezgara naguitzen.

2 Aitzitic iraitzi ditugu ahalquezco eſtalquiac, ebilten garela ez fineciarequin, eta ez Iaincoaren hitza falſificatzen dugula, baina eguiaren declarationez approba eraciten ditugula gure buruäc guiçonén conſcientia gucia baithan, Iaincoaren aitzinean.

3 Eta baldin gure Euangelioa eſtalia bada, galtzen diradenén da eſtalia:

4 Ceinétan mundu hunetaco iaincoac itſutu vkan baititu adimẽduac, diot, infideletan, Chriſt Iaincoaren imagina *denaren* gloriaren Euangelioco arguiac hæy arguiric eztaguiençát.

5 Ecen eztitugu gure buruäc predicatzen, bai-

na Iesus Christ Iauna: eta gu, çuen cerbitzari *garela* Iesusgatic.

6 * Ecen arguiac ilhumbetic argui leguian erran duē Iaincoac, argui eguin du gure bihotzetan, Iesus Christen beguithartean Iaincoaren gloriaren eçagutzera illuminatzeco. Gen.1.3.

7 Baina thesaur haur lurrezco vncietan dugu, verthute hunen excellentiá Iaincoaren dençát, eta ez gutaric:

8 Gucietan affligitzen gara, baina ez hertsen: behartzen gara, baina ez vtziten:

9 Persecutatzen gara, baina ez abandonnatzen: iraizten gara, baina ez galtzen.

10 Leku gucietan bethiere Iesus Iaunaren mortificationea gorputzean ekartē dugula Iesusen vicitzea-ere gure gorputzean manifesta dadinçát.

11 Ecen gu vici garenoc, bethi heriotara liuratzen gara Iesusgatic, Iesusen vicitzea-ere gure haragui mortalean manifesta dadinçát.

12 Hunegatic herioac gutan lan eguitē du, eta vicitzeac çuetan.

13 Eta ceren fedearen Spiritu ber-bat baitugu, scribatua den beçala, * Sinhetsi vkan dut, *eta* halacotz minçatu içan naiz: guc-ere sinhesten dugu, eta halacotz minço gara. Psal.116.10.

14 Daquigularic ecen Iesus Iauna resuscitatu duenac gu-ere Iesusez resuscitaturen gaituela, eta ethor eraciren gaituela bere presentiara cuequin batean.

15 Ecen hauc gucioc çuengatic *dirade*, gratia

gucizco handi haur, anhitzen remerciamenduz redunda dadinçát Iaincoaren gloriatan.

16 Halacotz, ezgara naguitzen: baina are baldin gure guiçon campocoa corrũpitzen badaere: barnecoa ordea arramberritzen da egunetic egunera.

17 Ecen gure afflictione arin artegutitacoac eraguiten du gutan gloriataco piçu excellẽt excellentqui eternalbat.

18 Gauça visibleac consideratzen eztitugunean, baina inuisibleac: ecen visibleac demboratacotz dirade: baina inuisibleac, seculacotz.

## CAP. V.

1 *Lurreco habitationea, eta etche eternala.* 4 *Fidelén suspirioa.* 7. *Fedez ebiltea.* 10 *Comparituren guciéc Christen tribunal aitzinean.* 14. *Christen herioa.* 15 *Christi vicitzeco.* 18 *Nola Iaincoac berarequin reconciliatu gaituén.* 21. *Bekatua. Iaincoaren iustitiá.*

1 ECen badaquigu baldin gure lurreco habitatione hunetaco tabernaclea deseguin badadi, edificiobat Iaincoaganic badugula, etche escuz eguin eztén eternalbat ceruëtan.

*Apoc. 16. 25.*

2 Ecen suspirioz-ere halacotz gaude, * gure habitatione cerutic denaz veztitu içatera desir dugula.

3 Badaric-ere baldin veztituac ez billuciac eriden bagaitez.

4 Ecen tabernacle hunetan garenoc, cargaturic ſuſpirioz gaude : ceren deſir baitugu ez billuci içatera, baina arreueztitu içatera, iretſi dadinçát mortal dena vicitzeaz.
5 Eta hartara berera gu formatu gaituena Iaincoa *da*, Spirituaren erréſac eman-ere drauzquiguna.
6 Confidança dugularic bada bethiere eta daquigularic ecen arrotz garela gorputz hunetan, abſent gara Iaunaganic.
7 (Ecen fedez gabiltza ez ikuſtez)
8 Baina cõfidança dugu,eta nahiago gara gorputzetic ilki,eta Iaunarequin habitatzera ioan.
9 Eta halacotz dugu deſiratzen,bay preſent bagara,bay abſent bagara,harẽ gogaraco içatera.
10 *Ecen guciéc comparitu behar dugu Chriſten tribunal aitzinean,batbederac gorputzean recebi deçançat eguin duqueenaren araura,edo vngui edo gaizqui. Rom.14.10
11 Daquigularic bada Iaunazco iciapena *cer den* guiçonac ditugu federa erekarten,eta Iaincoagana manifeſtatuac gara: eta ſporçu dut, çuen conſcientietara-ere manifeſtatuac garela.
12 Ecen eztrauzquiçuegu gure buruäc berriz laudatzen,baina occaſione emaiten drauçuegu guçaz gloriatzeco: duçuençát *cer ihardets* apparentiaz eta ez bihotzez gloriatzen diradenén contra.
13 Ecen adimenduz erautzen bagara Iaincoari *erautzen* guiaiẑquio: edo adimendu onetaco bagara, çuén *gara*.

14 Ecen Christen charitateac hertsen gaitu: hunez guerthu garelaric, ecē baldin bat guciacgatic hil içan bada, beraz guciac hil içan diradela.

15 Eta *hura* guciacgatic hil içan da, vici diradenac guehiagoric bere buruëy vici eztiradençát, baina hecgatic hil eta resuscitatu içan denari.

16 Halacotz, guc hemendic harát nehor eztugu eçagutzen haraguiaren arauez: eta baldin Christ haraguiaren arauez eçagutu badugu-ere, orain ordea eztugu guehiagoric eçagutzen.

17 Beraz baldin cēbeit, *bada* Christ *Iaunean, biz* crearura berri: * gauça çaharrac iragan dirade, huná, gauça guciac berri eguin dirade.

*Esa.43.19. apoc.21.4.*

18 Eta hauc gucioc Iainçoaganic dirade, ceinec reconciliatu baiquaitu berequin Iesus Christez, eta eman baitraucu reconciliationezco ministerioa:

19 Ecen Iaincoa Christeā cen, mundua berequin reconciliatzen çuela, hæy imputatzen etzerauztela berén bekatuac: eta eçarri vkan du gutan reconciliationezco hitza.

20 Harren, Christen iceneā embachadore gara, Iaincoac guçaz othoitz eguiten balerauçue beçala: othoitz eguiten drauçuegu Christen icenean, reconcilia çaquizquioten Iaincoari.

21 Ecen bekaturic eçagutu eztuena, guregatic bekatu eguin vkan du: hartan gu Iaincoaren iustitia eguin guentecençát.

CAP. VI.

CAP. VI.

*1 Vngui eguitera ditu exhortatzen. 2 Dembora gogaracoa eta ſaluamendutaco eguna. 4 Iaincoaren cerbitzarien conuerſationea. 14 Infidelequin ez vztartzeco. 16 Iaincoaren templea.*

1 BAda *haren* languile garelaric, othoitz eguitē ere badrauçuegu, eztuçuen, alfer Iaincoarē gratiá recebitu.

2 Ecen dio *Iaincoac*, * Dembora gogaracoā exauditu vkan aut, eta ſaluamēdutaco egunean aiutatu vkanaut. Huná orain dembora gogaracoa, huná orain ſaluamendutaco eguna.

Eſa.49.8.

3 Scandaloric batre deuſetan emaiten eztugularic, *gure* miniſterioa vitupera eztadinçát:

4 Baina gauça gucietán approbatu eracuſten ditugularic gure buruäc * Iaincoaren cerbitzari ançó, patientia handiz tribulationetan, neceſsitatetan, herſturétan,

1. Cor.4.1.

5 Çauriétan, preſoindeguiétan, tumultuoétan, trabailluétan, veillatzétan, baruretan.

6 Puritatez, eçagutzez, ſpiritu patientez, ontaſſunez, Spiritu ſainduaz, hypocryſia gaberico charitatez,

7 Eguiazco hitzez, Iaincoaren botherez iuſtitiazco harma eſcuinez eta ezquerrez.

8 Ohorez eta deſohorez, fama gaitzez eta

fama onez.

9 Seduciçale beçala, eta *alabaina* eguiati: ez eçagunac beçala, eta *alabaina* eçagunac: hiltzen baguina beçala, eta huna vici gara: gaztigatzen garenac beçala, eta *alabaina* ez hilac:

10 Trifte beçala, baina bethi aleguera: paubre beçala, baina anhitzen abratſale: deus gabe beçala, eta *alabaina* gauça gucien poſſediçale.

11 O Corinthianoác, gure ahoa irequia da çuetara, gure bihotza largatua da.

12 Etzarete herſſiqui habitatzen gutan: baina enſerratuac çarete ceuron halſarretan.

13 Bada neure haourrey anço recompenſa beraz minço natzaiçue: larga çaiteztez çuec-ere.

*Eccl.13.22* 14 Etzaiteztela infidelequin vztár: * ecen cer participatione *du* iuſtitiác iniuſtitiarequin? eta cer communicatione arguiac ilhumbearequin.

15 Eta cer concordia *du* Chriſtec Belialequin? eta cer parte fidelac infidelarequin?

16 Eta cer conſentimendu *du* Iaincoaren templeac idolequin? * ecen çuec Iainco viciaren tẽple çarete: Iaincoac erran duen beçala * Habitaturen naiz hetan eta ebiliren: eta içanen naiz hayén Iainco eta hec içanẽ dirade ene populu.

*1 Cor.3.17 eta 6.19. Leui.26.11*

*Eſa.52.1.* 17 * Harren, ilki çaiteztez hayén artetic, eta ſepara çaiteztez, dio Iaunac: eta gauça cithalic hunqui ezteçaçuela, eta nic recebituren çaituztet.

*Hiere.31.1* 18 * Eta içanen natzaiçue çuey Aita, eta çuec

içanen çaizquidáte seme eta alaba, dio Iaun bothere gucitacoac.

CAP. VII.

*1 Satsutassunetaric chahutzeco. 5 Pauli heldu içã çaizcan afflictioneac. 8, 10. Iaincoazco eta mũduaren arauezco tristitiá. 11 Emendamendutaco fructuac 13 Tite Corinthianoéz recebitu.*

1 BEraz, *ene* màiteác, promessac ditugunaz gueroz, haraguiaren eta spirituarẽ satsutassun orotaric chahu ditzagũ gure buruäc : acabatzen dugularic sanctificationea, Iaincoaren beldurrequin.

2 Recebi gaitzaçue gu: nehor eztugu iniuriatu, nehor eztugu corrũpitu, nehor eztugu pillatu.

3 Eznaiz *çuen* condemnationetan minço: ecen lehen erran dut gure bihotzetan çaretela, elkarrequin hiltzeco eta elkarrequin vicitzeco.

4 Minçatzeco libertate handia dut çuec baithan : çueçaz gloriatzeco *materia* handia dut: consolationez complitu naiz, bozcarioz hambat eta guehiago bethe naiz, gure tribulatione gucian.

5 Ecen Macedoniara ethorri eta, eztu vkan gure haraguiac paussuric batre, baina gucietan affligitu içan gara: campotic bataillác, barnetic icidurác.

6 Baina abatituac consolatzen dituen Iaincoac

consolatu vkan gaitu Titeren ethorteaz.
7 Eta ez solament haren ethorteaz, baina hura cueçaz consolatu içan den consolationeaz-ere, contatzen ceraucunean çuen desir handia, çuen nigarra , çuen eneganaco affectione handia, hala non allegueratuago içan bainaiz.
8 Ecen baldin tristetu baçaituztet-ere epistolaz, eztut vrriqui, vrriquitu içan baçaitadan-ere, ecen badacussat epistola harc, demborataco badere, tristetu vkan çaituztela.
9 Orain aleguera naiz, ez cerē tristetu içan çareten, baina ceren tristetu içan çareten penitentiatara : ecen tristetu içan çarete Iaincoaren araura, hala non deusetan ezpaitzaiçue calteric eguin içan gure aldetic.
10 Ecen Iaincoaren arauezco tristitiác, penitentia obratzen du, vrriquimendu gaberico saluamendutara : baina munduco tristitiác herioa obratzen du.
11 Ecen horrá, Iaincoaren arauez tristetu içate horrec berac, cein artha handia çuetan obratu vkan du: aitzitic *cer* satisfactionea, aitzitic indignationea, aitzitic beldurra, aitzitic desir hādia , aitzitic affectione handia, aitzitic mendequioa? gauça gucietan eracutsi içan çarete nola chahu çareten eguiteco hunetan.
12 Bada baldin scribatu badrauçuet-ere , eztrauçuet *scribatu* iniuria eguin vkan duenaren causaz, ezeta iniuriatu içan denaren causaz, baina çuec baithan manifesta ledinçát *guc* çueçaz dugun arthá Iaincoaren aitzinean.

13 Causa hunegatic consolatu içan gara çuen consolatu içanaz: baina haguitzez alegueratuago içan gara Titeren alegrançáz, ceren recreatu içan baita haren spiritua çueçaz guciéz.

14 Eta baldin cerbaitetan çueçaz hura baithã gloriatu içan banaiz, eztut ahalqueric recebitu: baina nola gauça guciac eguiaz erran baitrauzquiçuegu, hala gure gloriatzea-ere, *ceinez vsatu vkan baitut* Tite baithara, eguiá *eriden* içã da.

15 Eta haren affectionea handiago da çuetara, orhoitzen denean çuen gucion obedientiáz, *eta* nola hura recebitu vkan duçuen beldurrequin eta ikararequin.

16 Aleguera naiz bada ceren guça gucietan çueçaz assegura ahal bainaite.

CAP. VIII.

1 *Elemosyna eguitera exhortatzen.* 9 *Christ paubre eguin içan guregatic.* 11 *Elemosyna nola Iaincoaren gogaraco.* 16 *Tite Corinthianoetara igorri.*

1 TAquin eraciten drauçuegu bada, anayeác, Macedoniaco Elicey eman içan çayen Iaincoaren gratiá:

2 Nola afflictionezco phorogança handitan hayén alegranciázco abundantiá, eta hayén paubrecia beherá abundant içan den hayén prompt içatearen abrastassunetan:

3 Ecen testificatzen dut, ahalaren arauez, eta ahalaz garaitic, gogatsu içan *diradela*:

4 Othoitz handirequin othoitz eguitẽ cerau-

cutela, ſainduey *eguiten*, *çayen* aiutaren gratiá eta communicationea, recebi gueneçan.

5 Eta eztute ſperança guenduen beçala *eguin*, baina bere buruäc eman drautzate lehenïc Iaunari, eta *guero* guri, Iaincoaren vorondatez.

6 Tite exhorta gueneçançát, nola lehenetic haſſi vkan baitu, hala acaba-ere leçan çuec baithan gratia haur-ere.

7 Bada gauça gucietan abundos çareten beçala fedez, eta hitzez, eta eçagutzez, eta diligentia oroz, eta çuen gureganaco charitatez, *eguiçue* gratia hunetan-ere abundos çareten.

8 Eztut manamenduz erraiten, baina bercén diligentiáz çuen charitateco leyaltatearen-ere phorogatzeagatic.

9 Ecen eçagutzē duçue Ieſus Chriſt gure Iaunaren gratiá, nola çuengatic paubre eguin içan den abrats celaric: harē paubreciáz çuec abrats cindeiztençát.

10 Eta gauça hunetan conſeillu emaiten dut: ecen haur çuen probetchutaco da, chazdanic haſſi içan cinetenón, éz ſolament eguiten, baina nahi vkaiten-ere.

11 Orain bada eguite bera-ere acaba eçaçue, nolaco *içan baita* nahiaren gogo preſta, halaco biz acabatzea-ere vkanaren arauez.

12 Ecen baldin aitzinetic bada gogo preſt içatea, nehor duenaren arauez gogaraco da, eta ez eztuenaren arauez.

13 Ecen ezta *haur* bercéc ſolagemendu dutençát, eta çuec aurizqui çaitezten çát, baina egoal-

qui dembora hunetan çuen abundantiác *suppli beça* hayén peitutassuna.
14 Hayén abundantiác-ere çuen peitutassuna suppli deçançát, egoaltassun eguin dadinçát.
15 Scribatua den beçala, * Anhitz *bildu çuenac*, eztu deus vkan soberaturic: eta guti *çuenac*, eztu vkan gutiegui.

Exod.16. 18.

16 Eta esquer Iaincoari ceinec eman baitu artha bera çueçaz Titeren bihotzean.
17 Ceren *ene* exhortationea gogaraco içan baitzayó, eta affectionatuago içanez bere buruz çuetara ethorri içan baita.
18 Eta igorri vkã-dugu harequin bateã anayea, ceinẽ laudorioa baita Euãgelioan Eliça gucietã:
19 (Eta ez solament *laudatu*, baina elegitu-ere içan da Elicéz gure bidageco lagun, guçaz administratzen den gratia hunequin Iaun berarẽ gloriatã eta çuen gogo prestarẽ *cerbitzutan*)
20 Ihes eguiten draucagula huni, nehorc vitupera ezgaitzan guçaz administratzen den abũdantia hunetan:
21 * Eta procuratzen dugula on dena, ez Iaunaren aitzinean solament, baina guiçonén aitzinean-ere.

Rom.12. 17.

22 Eta igorri dugu hequin gure anayea, cein experimentatu baitugu anhitzetan anhitz gauçatan diligent, eta orain vnguiz diligentago, *çuetan* dudan confidança handiagatic.
23 Bada Titez den becembatean ene lagun da eta çuec baithan aiutaçale: eta gure anayéz den becembatean, Elicén embachadore *dirade eta* Christen gloria.

24 Bada, çuen charitatearen eta gure çueçazco gloriatzearen phorogançá eracutſaçué hetara Elicén aitzinean.

## CAP. IX.

*1 Elemoſyna eguitera ditu exhortatzen. 5 Liberalitate elemoſyná deitzen. 6 Eta haciarequin comparatzen. 11 Eſquerrén Iaincoari emaitea. 14 Elemoſyna eguiten dutenacgatic othoitz eguiteaz.*

1 ETa ſainduey eguiten çayẽ aiutáz den becembatean, çuey ſcribatzea ſoberancia çayt.

2 Ecen badaquit çuẽ gogo preſta, ceinagatic çueçaz gloriatzen bainaiz Macedoniacoac baithan, ecen Achaia preſt dela chazdanic: eta çuetaric *heldu den* zeloac anhitz *perſona* incitatu vkan du.

3 Igorri vkan ditut bada anaye hauc, gure çueçazco gloriatzea alde hunez vano eztén: erran dudan beçala, preſt çaretençát:

4 Baldin Macedoniacoac enequin ethor baditez, eta preſtatu gabeac eriden baçaitzatez, ahalque iragan ezteçagun (ezterradáçát çuéc) *çueçaz* gloriatu gareneco ſegurança hunetan.

5 Bada neceſſario eſtimatu vkan dut othoitz eguitera anayey, lehenic çuetara datocen, eta lehen acaba deçaten çuen liberalitate aitzinetic declaratua: hura preſt dençát liberalitate anço, eta ez cekentaſſun anço.

6 Eta haur *erraiten dut*, Cekenqui ereiten duenac cekenqui bilduren-ere du: eta liberalqui ereiten duenac, liberalqui bilduren-ere du.

7 Batbederac bere bihotzean propoſatzē duen beçala, begui: *ez triſtitiarequin edo bortchaz: *ecen alegueraqui emaiten duenari on daritza Iaincoac. *Rom. 12.8.* *Eccl. 35.11.*

8 Eta botheretſu da Iaincoa gratia guciarē çuetan abunda eraciteco: gauça gucietan bethiere ſufficientia gucia duçuelaric, obra on orotara abundos çaretençát:

9 Scribatua den beçala, *Diſtribuitu *eta* eman vkan draue paubrey: haren iuſtitiá dago ſeculacotz. *Pſal. 112.9*

10 Bada hacia ereilleari fornitzē draucanac, ogui-ere iateco diçuela, eta multiplica deçala çuē hacia, eta çuen iuſtitiaren fructuac augmenta ditzala:

11 Gauça gucietan abraſturic *abundos çaretençát* ſimplicitate orotara, ceinec eguitē baitu guçaz eſquerrac eman daquizquión Iaincoari.

12 Ecen oblatione hunen adminiſtrationeac eztu ſainduén neceſſitatea ſupplitzen ſolament, baina abundatzen-ere badu anhitzec Iaincoari eſquerrac drauzquioten becembatean:

13 (Aiuta hunen phorogança hunez Iaincoa glorificatzen dutela çuen gogo batetaco ſuiectionearen gainean Chriſten Euangeliora, eta *çuen* hetaraco eta gucietaraco communicatione promptoaren gainean)

14 Eta çuengatic othoitz eguiten duten becembatean çuen deſira dutelaric, Iaincoarē gratia çuetan abundatzen denagatic.

15 Eſquer bada Iaincoari haren dohain erran ecin daitenaz.

CAP. X.

*1 Euangelioarē ſimplicitatean ebilteco. 4 Paulen harmadurá, 8 eta puiſſançá Corinthianoén edificationetan.*

1 GAineracoaz, othoitz eguiten drauçuet Chriſten emetaſſunaz eta clementiáz, nic neurorrec Paulec, preſentián çuē artean chipi, baina abſentián çuetara hardit naicenac.

2 Othoitz eguiten drauçuet bada preſent niçatequeenean eznaicén hardit hardieça batez, ceinez deliberatzen baitut hardit içatera haraguiaren araura ebilten baguinade beçala eſtimatzen gaituzten batzutara.

3 Ecen haraguian ebilten garelaric, ez gara haraguiaren araura bataillatzen:

4 (Ecen gure guerlaco harmadurác eztirade carnal, baina botheretſu Iaincoaz, fortalecén deſeguiteco.)

5 Deſeguiten ditugularic conſeilluac, eta Iaincoaren eçagutzearen cōtra altchatzē den gorataſſun gucia: eta eramaitē dugularic captiuo beçala adimendu gucia Chriſten obedientiara:

6 Eta preſt dugu nondic mendeca gaitecen deſobedientia oroz, çuen obedientiá complitu datequeenean.

7 Beguién aitzinean dituçuen gaucetara beha çaudete? baldin edoceinec bere baithan confidança badu Chriſtena dela, aldiz penſa beça bere baithan, eçen hura Chriſtena *den* beçala, ha-

laber gu-ere Christenac *garela*.

8 Ecen baldin are guehiago cerbait gloriatu nahi banaiz gure puissançáz, cein Iaunac eman baitraucu *çuen* edificationetan, eta ez çuen destructionetan, eznaiz ahalqueturen:

9 Irudi eztudançát epistolaz icitu nahi çaituztedala.

10 Ecen epistolác (dioite) graue dirade eta borthitz, baina gorputzaren presentiá flaccu, eta hitza gaichto.

11 Haur estima beça hainac, ecen nolaco baicara hitzez epistoletan absentián, halaco *içanen garela* presentian-ere eguinez.

12 Ecen ezgara venturatzen gure buruén bardin eçartera edo cõparatzera bere buruäc laudatzen dituzten batzuequin: baina eztute aditzen hec bere buruäc bere buruëquin neurtzen dituztela, eta bere buruäc bere buruëquin comparatzen dituztela.

13 Baina gu ezgara gloriaturen *gure* neurrico eztiradẽ gaucéz: *aitzitic Iaincoac partitu draucun neurri reglatuaren arauez, *gloriaturen gara* çuetarano-ere heldu içan garela. Ephe.4.7.

14 Ecen çuetarano heldu içan ezpaguina beçala, ezgara hedatzen behar den baino guehiago: ecen çuetarano-ere heldu içan gara Christen Euangelioan:

15 Ez *gure* neurrico etzén gauçaz gloriatzen guinadelaric, *erran nahi dut*, berceren trabailluetan: baina sperança dugularic ecen çuen fedea handi dadinean, *gu-ere* frangoqui handitu-

ren garela aſſignatu içan çaicun neurrian.

16 *Hala* non çuec baino aitzinago *diraden lekuetan* euangeliza deçadan *eta* ezgaitecen gloria berceri aſſignatu içan çayón neurrian, *erran nahi dut*, gauça ia preparatuetan.

Hier.9.23. 1.cor.1.31. 17 *Baina gloriatzẽ dena Iaunean gloria bedi.

18 Ecen berac bere buruä preçatzen duena ezta approbatua, baina Iaunac preçatzẽ duena.

CAP. XI.

*4, 7 Paulen predicationea eta humilitatea. 9 Paulec ſari gabe predicatu. 13 Apoſtolu falſuac: 16 Hayén contra Paul gloriatzen. 24 Haren ſuffrimenduac Euangelioaren predicatzean.*

1 AInençaçue ſupporta appurbat neure erhogoán, baina aitzitic ſupporta neçaçue.

2 Ecẽ ieloſſi naiz çueçaz Iaincoaren ieloſgoaz: ecen preparatu cerauzquiotet ſenhar bati (virgina caſtabat *beçala*) Chriſti, preſenta çaitzatedançát:

Gene.3.4. 3 Baina beldur naiz nolazpait, nola * ſugueaç Eua ſeducitu vkan baitu bere fineciaz, hala çuen penſamenduac-ere corrumpi eztitecen Chriſtean den ſimplicitatetic.

4 Ecen baldin norbeit ethor baledi *guc* predicatu eztugun berce Ieſusbat predica lieçaçuenic, edo *baldin* berce ſpiritubat recebitzen banic, edo cindutẽ recebitu eztuçuenic, edo berce Euangeliobat recebitu eztuçuenic, *hura* vngui paira cineçaquete.

5 Ecen badaritzat eznaicela deuſetan Apoſto-

lu excellentenac baino mendreago içan.
6 Eta baldin idiot banaiz-ere minçoan, ez ordea eçagutzean: aitzitic guciz gauça gucietan manifestatu içan gara çuetara.
7 Ala falta eguin dut neure buruären beheratzean, çuec altcha cindeiztençat? *eta* ceren dohainic Iaincoaren Euangelioa predicatu baitrauçuet?
8 Berce Eliçác billuci vkan ditut, hetaric sari hartuz, çuec cerbitza cinçatedançát.
9 Eta çuequin nincenean, eta beharra nuenean *eznaiz nagui içan eguitecoan nehoren caltetan: ecen ni falta nincena supplitu vkan dute Macedoniaric ethorri içan ciraden anayéc, eta beguiratu içan naiz eta beguiraturen deusetan-ere çuen carga içatetic.
*Ber.12.13.*
10 Christen eguiá da nitan, ecen gloriatze haur eztela boçaturē enetzat Achaiaco regionétan.
11 Cergatic? *ala* ceren çuey on eztaritzuedan? Iaincoac badaqui.
12 Baina eguiten dudana eguinen-ere badut: occasione bilha dabiltzaney occasionea trenca diecedançát: gloriatzen diraden gauçán gu bay beçalaco eriden ditecençat.
13 Ecen halaco apostolu falsuac, obrari sotil dirade, Christen Apostolutara transformaturic.
14 Eta ezta mirestecо, ecen Satan bera-*ere* trāsformatzen da arguico Ainguerutara.
15 Ezta beraz gauça handia baldin haren ministreac-ere iustitiataco ministretara transformatzen badirade: ceinén fina hayen obrén arau-

taiçanen baita.

16 Berriz diot, nehorc ezteçan eſtima erhoa naicela: ezpere erho anço-ere recebi neçaçue, ni-ere appurbat gloria nadinçát.

17 Erraiten dudana, eztut Iaunaren arauez erraiten, baina erhogoaz beçala, gloriatzeco ſegurança hunetan.

18 Haraguiaren arauez anhitz gloriatzen diradenaz gueroz, ni-ere gloriaturen naiz.

19 Ecen gogotic ſuffritzen dituçue erhoac, çuhur çaretelaric.

20 Ecen ſuffritzen duçue baldin nehorc ſuiectionetan eçarten baçaituztez, baldin nehorc ireſten baçaituztez, baldin nehorc *çuena* edequiten badrauçue, baldin nehor gaineancen bada, baldin nehorc beguithartean ioiten baçaituztez.

21 Deſohorerē araura diot, gu indar gabe içan baguinade beçala, aitzitic certan-ere nehor hardit baita (erhoqui minço naiz) hardit naiz niere.

*Philip. 3.5.* 22 *Hebraico dirade? ni-ere: Iſraeltar dirade? ni-ere: Abrahamen haci dirade? ni-ere:

23 Chriſten miniſtre dirade? (erho anço minço naiz) areago ni: nequetan, guehiago: çauritan *hec baino* guehiago: preſoindeguitan, guehiago: heriotan, anhitz aldiz.

*Deut. 25.3* 24 Iuduetaric recebitu vkā dut borz aldiz *berrogueirá *colpe*, bat guti *aldian*.

*Act. 16.22* *Act. 14.19* 25 *Hiruretan cihorrez açotatu içan naiz, *behin lapidatu içan naiz: *hiruretan naufragio e-
*Act. 27.42*

guin vkan dut:gau eta egun itſas hundarrean içan naiz.

26 Bidetã anhitz aldiz, fluuioén periletã, gaichtaguinén periletan, *neure* nationecoetaric periletan, Gentiletaric periletan, hirian periletan, deſertuan periletan, itſaſſoan periletan, anaye falſuén artean periletan.

27 Trabaillutan eta nequetan, veillatzetan maiz, goſſetan eta egarritan, barurétan maiz, hotzean eta billuci içatean.

28 Campotico gauçác daudela *bada* egun oroz aſſetiatzen nauenic, *cein baita*, Eliça guciéz dudan arthá.

29 Nor affligitzen da, eta ni eznaicén affligitzen? nor ſcandalizatzen da, eta ni eznaicen erratzen?

30 Baldin gloriatu behar bada, neure infirmitatezco gaucéz gloriaturen naiz.

31 Iaincoac, *cein baita* Ieſus Chriſt gure Iaunaren Aita ſeculaçotz benedicatua, badaqui ecen eztiodala gueçurric.

32 *Damaſeco hirian regue Aretaſen icenean *Act.9.24.* *cen* gobernadoreac, eçarri vkã çuen goaita Damaſecoen hirian, ni hatzaman nahiz.

33 Baina leiho batetaric ſaſquian erautſi içan nencen murrutic: eta halatan haren eſcuey itzur nenguién.

CAP. XII.

1 *Pauli eguin içan çaizcan reuelationéz.* 10 *Paulec infirmitatetan atſeguin hartzen.* 12 *Haren Apoſtolutaſſunaren mercác.* 13 *Sari gabe predicatu.* 21 *Haren nigarrac.*

1 SEgur ezta mengoa gloria nadin: ecen ethorriren naiz visionetara eta Iaunaren reuelationetara.

2 Badaçagut guiçon-bat Christ *Iaunean* hamalaur vrthe baino lehen (ala gorputzetan, eztaquit: ala gorputzetic lekora, eztaquit: Iaincoac daqui) hirurgarren cerurano harrapatu içan denic.

3 Eta badaquit, halaco guiçona (ala gorputzetan, ala gorputzetic lekora, eztaquit: Iaincoac daqui)

4 Ecen harrapatu içan dela Paradisura, eta ençun vkan dituela erran ecin daitezqueen hitzac, erraiteco guiçonaren impossibleac.

5 Halacoaz gloriaturen naiz: baina neure buruäz eznaiz gloriaturen, neure infirmitatetan baicen.

6 Ecen baldin gloriatu nahi banaiz, eznaiz erhoa içanen, ecen eguia erranen dut: baina iragaiten naiz, nehorc niçaz estima ezteçan nitan ikusten, edo eneganic ençuten duen baino guehiago.

7 Eta reuelationearen excellentiagatic altchegui eznendinçát, eman içan çait escardabat haraguian, *eta* Satanen ainguerua ene buffetatzeco, altchegui eznendinçát.

8 Gauça hunen gainean hiruretan Iaunari othoitz eguin draucat *hura* eneganic parti ledinçát.

9 Eta erran vkan draut, Asco duc ene gr atiáz

ecen ene puiſſançá infirmitatean acabatzẽ duc. Beraz guciz gogotic lehen gloriaturẽ naiz neure infirmitatetan, Chriſten puiſſançá nitan habita dadinçát.

10 Halacotz dut atſeguin hartzen infirmitatetan, iniurietan, neceſſitatetan, perſecutionetan, Chriſtengatico herſturetan: ecen noiz bainaiz impotent, orduan naiz botheretſu.

11 Erho içã naiz *neure* gloriatzean: çuec bortchatu nauçue: ecen ni behar nincén çueçaz laudatu, ikuſſiric ecen eznaicela deuſetan Apoſtolu excellentac baino mendreago içan, deus ezpanaiz-ere.

12 Segur *ene* Apoſtolutaſſunaren ſeignaleac complitu içan dirade çuetan patientia gucirequin eta ſignorequin eta miraculurequin eta verthuterequin.

13 Ecen certan berce Eliçác baino mendreago içan çarete? ni neuror çuen caltetan * nagui içan eznaicena baicen? bidegabe haur barka iecadaçue.

Lehen 11. 9

14 Huná, herenci preſt naiz çuetara ethortera: eta eznáiz çuen caltetan nagui içanen: ecen eznabila çuen diraden gaucén ondoan, baina ceurón *ondoan*: ecen haourréc eztute aitendaco theſaurizatu behar, baina aitéc haourrendaco.

15 Eta niçaz den becembatean guciz gogotic deſpendaturen dut eta deſpendaturen naiz çuen arimacgatic: çuec hambat eta guehiago maite çaituztedalaric, gutiago onhetſia banaiz-ere.

16 Baina biz, nic etzaituztedan cargatu vkan:

T.i.

ordea ſotil içanez, ſineciaz hartu vkã çaituztet.
17 Çuetara igorri vkan ditudanetaric batez-ere pillatu vkan çaituztet?
18 Othoitz eguin draucat Titeri, eta harequin igorri vkan dut anayebat: ala pillatu vkan çaituztez Titec? ezgara Spiritu batez ebili içan? ezgara hatz ber-batez ebili içan?
19 Berriz vſte duçue ecen gure buruäc excuſatzen ditugula çuec baithara? Iaincoaren aitzinean, Chriſtean minço gara: baina gauça *hauc* gucioc, gucizcomaiteác, çuẽ edificationeagatic.
20 Ecen beldur dut guertha eztadin, ethor nadinean, nahi etzintuqueiztedan beçalaco eriden etzaitzatedan, eta ni eriden eznadin çueçaz nahi eztuçuen beçalaco: nolazpait eztiraden guduac, inuidiác, aſſe-retaſſunac, liſcarrac, gaizquierraiteac, chuchurlac, vrguluac, ſeditioneac:
21 Eta berriz nathorrenean abacha ezneçan neure Iaincoac çuec baithan, eta nigar eztaguidan lehen bekatu eguin duten anhitzez, eta emendatu eztiradenez cithalqueriataric, paillardiçataric eta eguin vkan duten inſolentiatic.

CAP. XIII.

*1 Paulec Corinthianoac mehatchätzen emenda ez paditez. 5 Bere buruären phorogatzea. 10 Paulen puiſſançá.*

1 HAur da çuetara ethorté naicén heren aldia.*Biga edo hirur testimonioré ahoan fermu içanen da hitz gucia.

Deu. 19.15. mat.18.16. ioan 8.17. hebr.10.28.

2 Aitzinetic erran vkan dut, eta berriz aitzinetic diot, present baninz beçala, eta absent naicelaric orain scribatzen drauet lehen bekatu eguin duteney, eta goitico guciey, ecen berriz banathor eztudala *nehor* guppida vkanen.

3 Christ nitan minço denaren experientiaren ondoan çabiltzatenaz gueroz, cein ezpaita infirmo çuetara, baiña da botheretsu çuetan.

4 Ecen crucificatu içan bada-ere infirmitatez, alabaina vici da Iaincoaren verthutez: ecen guere infirmo gara harequin, baina vici gara harequin Iaincoaren verthutez çuec baithara.

5 * Çuen buruäc experimentáitzaçue eya fedean çaretenez, çuen buruäc phorogaitzaçue: iala ezt ituçue çuen buruäc eçagutzen, ecen Iesus Christ çuetan dela? baldin reprobo ezpaçarete.

1 Cor.11.28.

6 Baina sperança dut eçaguturen duçuela ecen gu ezgarela reprobo.

7 Eta othoitz eguiten draucat Iaincoari, deus gaizquiric eguin ezteçaçuen: ez gu approbatu eriden gaitecēçát, baina çuec vngui daguiçuençát, eta gu reprobo beçala garençát.

8 Ecen deus ecin daidiquegu eguiaren contra, baina eguiaren alde.

9 Ecen allegueratzen gara gu flaccu garen, eta çuec erscon çareten: eta haur-ere desiratzen dugu, *diot*, çuen perfectionea.

10 Halacotz gauça hauc absent naicela scribatzen ditut, present içanen naicenean seueritatez vsat ezteçadãçát, Iaunac edificationetacotz eta ez destructionetacotz eman drautan botherearen araura.

11 Gaineracoaz, anayeác, alleguera çaitezte, auança çaiteztez perfect içatera, consola çaiteztez, çareten consentimendu batetaco, çareten vici baquean, eta charitatezco eta baquezco Iaincoa içanen da çuequin.

Rom 16.16 1.cor.16.20 1.pier.5.14

12 *Elkar saluta eçaçue pot saindu batez. Salutatzen çaituztez saindu guciéc.

13 Iesus Christ Iaunaren gratiá, eta Iaincoaren charitatea, eta Spiritu sainduaren communicationea *dela* çuequin gucioquin. Amen.

*Corinthianoetaratco bigarrena Philippes Macedoniacotic Titerequin eta Luc-equin scribatua.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN GALATIANOETARATCO EPISTOLA.

CAP. I.

*1 Paul Apostolu ez guiçonéz ezeta guiçonen partez. 4 Christec bere buruä guregatic eman. 6 Galatianoac fedetic erauci. 8 Maledictione predicari falsuén gainean. 12 Paulen doctriná. 13 Haren conuersationea conuerti cedin baino lehen.*

1 PAVL Apostoluac (ez guiçonéz ezeta guiçonen partez, *baina Iesus Christé eta Iainco Aita hura hiletaric resuscitatu duenaren partez.) Tit.1.3.

2 Eta enequin diraden anaye guciéc, Galatiaco Elicey:

3 Gratia *dela* çuequin eta baquea Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ gure Iaunaganic.

4 Ceinec bere buruä emã vkan baitu gure bekatuacgatic, *idoqui guençançát secula gaichto hunetaric, gure Iainco eta Aitaren vorondatearen araura. Luc 1.74.

5 Hari *dela* gloria secula seculacotz. Amen.

6 Miraz nago nola horrein sarri, Christen gratiara deithu vkan cenduztena vtziric transpor-

tatu içan çareten berce Euangeliotara:
7 Berceric batre eztelaric:baina batzuc trublatzen çaituztéz,eta nahi duté erauci Chriſten Euangelioa:
8 Baina baldin guc-ere, edo Aingueru batec cerutic euangelizatzen badrauçue, euangelizatu drauçuegunaz berceric,maradicatu biz.
9 Lehen erran dugun beçala, orain-ere berriz diot,Baldin norbeitec euãgelizatzen badrauçue recebitu duçuenaz berceric,maradicatu biz.
10 Ecen orain guiçonéz predicatzen dut ala Iaincoaz? ala guiçonén gogara eguin nahiz nabila? Segur baldin oraino guiçonén gogaraco baninz,Chriſten cerbitzari eznininçande.
1.Cor.15.1 11 *Iaquin eraciten drauçuet bada,anayeác,niçaz predicatu içan den Euangelioa, eztela guiçonaren araura.
12 Ecen eztut hura guiçonganic recebitu ez ikaſſi:baina Ieſus Chriſten reuelationez.
Act.9.1. 13 *Ecen ençun duçue nola conuerſatu vkan dudan Iudaiſmoan, nola terriblequi Iaincoaren Eliçá perſecutatzen eta deſeguiten nuen:
14 Eta *nola* probetchatzẽ nincén Iudaiſmoan, ene quidetaric anhitz baino guehiago, neure nationean, neure aitén ordenancetara affectione guehienduna nincelaric.
15 Baina Iaincoaren placera içan denean (ceinec neure amaren ſabeleandanic appartatu baininduen eta deithu bainau bere gratiaz)
Eph.3.8. 16 Bere Semearen reuelatzera nitan, *hura euangeliza neçançát Gẽtilén artean, eznaiz ber-

tan conseillatu içan haraguiarequin eta odolarequin:

17 Eta eznaiz Ierusalemera itzuli içan ni baino lehẽ Apostolu *ciradenetara*: baina ioan nendin Arabiara: eta harçara itzul nendin Damascera.

18 Gueroztic hirur vrtheren buruän itzul nendin Ierusalemera Pierrisen visitatzera: eta egon nendin harequin amorz egun.

19 Eta berce Apostoluetaric ezneçã ikus Iacques Iaunaren anayea baicen.

20 Baina çuey scribatzẽ drauzquiçuedan gaucetan, huná, *badiotsuet* Iaunaren aitzinean, ecen eztiodala gueçurric.

21 Guero ethor nendin Syriaco eta Ciliciaco herrietara.

22 Eta nincen beguithartez eçagun gabea Iudeaco Eliça Christean *ciradeney*:

23 Baina solament ençun vkan çuten *erraiten cela*, Gu berce orduz persecutatzen guẽtuenac, orain predicatzen du berce orduz deseguiten çuen fedea.

24 Eta glorificatzen çuten Iaincoa nitan.

CAP. II.

*3 Cergatic Tite ez circonciditu. 4 Libertatea. Suiectionea. 7 Paul Gentilén doctor. 8 Pierris Iuduén Apostolu. 9 Iacques eta Pierris habe estimatu. 16 Iustificationea. Obrác. Fedea. 20 Fedez vici içatea.*

1 GVero hamalaur vrtheren buruän, berriz igan nédin Ierusalemera Barnabasequin, eta Tite-ere harturic.

2 Eta igan nédin reuelationez, eta hæy cõmunica niecén Gentilén artean predicatzen dudan Euangelioa, baina particularqui estimatan diradeney, neholere alfer laster aznaguian edo eguin eznuen.

3 Baina Tite-ere, cein baitzén enequin, Grec bacen-ere, etzedin bortcha circõciditu içatera.

4 Anaye falsu *Eliçán* bere buruz nahastecatuén causaz, cein sar baitzitecen gure libertate Iesus Christean dugunaren espia içatera, gu suiectionetara erekar guençatençát.

5 Eta suiectionez ezquitzaizte susmettitu momentbat-ere, Euangelioco eguiác çuetan iraun leçançát.

6 Eta *eztut deus ikassi* cerbait diradela irudi dutenetaric(nolaco noizpait içan diraden, etzait deus hunquitzen: ecen *Iaincoac eztu guiçonaren campoco apparentiá hartzen) ecen estimatã diradenéc eztraudaté deus guehiagoric communicatu.

Deu.10.17 2.chro.19.7 iob.34.19. sap.6.8. eccl.35.15. act.10.34. rom.2.11. ephe.6.9. colos.3.26. 1.pier.1.17.

7 Baina contrariora, ikussi vkan çutenean ecen Preputioco Euãgelioarẽ *predicationea* niri emã içan çaitadala, Circõcisionecoa Pierrisi beçala:

8 (Ecen Pierris baithan obratu vkan duenac Circoncisioneco Apostolutassunera, obratu vkan du ni baithan-ere Gentiletara.)

9 Eta eçagutu çutenean niri eman içan çaita-

dan gratiá, Iacqueſec eta Cephaſec eta Ioanneſec( habe diradela eſtimatuéc) lagunçazco eſcuinac eman drauzquigute niri eta Barnabaſi: gu Gentiletarát *guendoacençát* eta hec Circonciſionecoëtarat:

10 Solament *auiſatu gaituzte* paubréz orhoit guentecen: eta haren beraren eguitera arthatſu içan naiz.

11 Eta ethorri, içan cenean Pierris Antiochera, bekoquiz reſiſti nieçon hari, ceren reprehēditzeco baitzén.

12 Ecén Iacqueſganic batzu ethor citecē baino lehen, Gentilequin batean iaten çuen: baina ethorri içan ciradenean, retira eta ſepara cedin hetaric Circonciſionecoén beldurrez.

13 Eta ſimulationez vſatzen çuten harequin batean berce Iuduec-ere: hala non Barnabasere erekarri içan baitzén hayén ſimulationera.

14 Baina ikuſſi vkan nuenean ecen etzabiltzala oin chuchenez, Euangelioco eguiaren araura, erran nieçón Pierriſi gucien aitzinean, Baldin hi Iudu aicelaric Gentil anço vici bahaiz, eta ez Iudu anço, cergatic Gentilac bortchatzen dituc iudaizatzera?

15 Gu *baicara* naturaz Iudu, eta ez Gentiletaric bekatore.

16 Daquigularic ecen eztela guiçona iuſtificatzen Legueco obréz, baina Ieſus Chriſten fedeaz: guc-ere Ieſus Chriſt baithan ſinhetſi vkā dugu, iuſtifica guentecençát Chriſten fedeaz, eta ez Legueco obréz: ceren haraguiric batre

ezpaita iuſtificaturen Legueco obréz,

Rom.3.19. 17 * Eta baldin Chriſtez iuſtificatu nahiz gabiltzalaric, erideiten bagara gueuror-ere bekatore, Chriſt halacotz bekatuaren miniſtre da? Guertha eztadila.

18 Ecen baldin deſeguin ditudan gauçác harçara edificatzen baditut, tranſgreſſor neure buruä eguiten dut.

19 Ecen ni Legueaz Legueari hil içan nazayó, Iaincoari vici nequionçat, Chriſtequin batean crucificatu içan naiz.

20 Bada vici naiz, ez guehiagoric ni, baina vici da nitan Chriſt eta orain haraguian vici naicen vicitzeaz Iaincoaré Semearen fedeaz vici naiz, ceinec onhetſi vkan bainau, eta eman vkan baitu bere buruä enegatic.

21 Eztut abolitzen Iaincoaren gratiá : ecen baldin iuſtitiá Legueaz bada, beraz Chriſt mégoa gabe hil içan da.

## CAP. III.

*1 Galatianoac reprotchatzen. 2. Spiritu ſaindua. 3, 5 Legueco obrác. 8 Fedeac iuſtificatzen. 9 Benedicatuac edo maradicatuac cein. 16 Chriſt Abrahamē hacia, 19,20. Eta gure arartecoa. 21 Leguea. 22 Gucia bekatuaren azpian ertſi. 24 Leguea pedagogo. 26 Fedeaz Iainçoaren haour. 27 Chriſten i aunztea.*

1 O Galatiano çoroác, norc encantatu çaituztéz eguia obedi ezteçaçué? ceiney beguién aitzinean lehenetic repreſentatu içan baitzaiçue Ieſus Chriſt, çuen artean crucificatua?

2 Haur solament iaquin nahi dut çuetaric, Legueco obréz Spiritu *saindua* recebitu vkan duçue, ala fedearen predicationeaz?
3 Hain çoro çarete, Spirituaz hassiric, orain haraguiaz acaba deçaçuen?
4 Alfer hambat suffritu vkan duçue? baldin alfer-ere *bada*.
5 Bada, Spiritua çuey fornitzẽ drauçuenac, eta verthuteac çuetan obratzen dituenac, Legueco obréz *eguiten du*, ala fedearen predicationeaz?
6 *Baina aitzitic* * Abrahamec nola Iaincoa sinhetsi vkan baitu, eta hari iustitiatan imputatu içan baitzayo: *Gen.15.6. rom 4.3. iac.2.23.*
7 *Hala* badaquiçue ecen fedezcoac diradela Abrahamen haour.
8 Eta Scripturác aitzinetic ikussiric ecẽ fedeaz Iaincoac iustificatzen dituela Gentilac, aitzinetic euangelizatu vkan drauca Abrahami, *cioela*, *Benedicatuac içanen dituc hitã Gende guciac. *Gen.12.3. eccl.44.20 act.3.25.*
9 Bada, fedezcoac benedicatzen dirade Abraham fidelarequin.
10 Ecen norere Legueco obretaric baitirade, maledictionearen azpian dirade: ecen scribatua da,* Maradicatua da norere ezpaita egonen Legueco liburän scribatuac diraden gauça gucietan, hec eguin ditzançát. *Deut.27.26.*
11 Eta Legueaz nehor eztela iustificatzẽ Iaincoa baithan, gauça claroa *da*: * ecen iustoa fedez vicico da. *Abac.2 4. rom 1.17. heb.10. 38.*
12 Eta Leguea ezta fedetic: baina* gauça hec eguinen dituen guiçona, vicico da hetan. *Leuit.18.5*
13 *Baina* Christec redemitu vkan gaitu Le-

guearen maledictionetic, *bera* guregatic maledictione eguin içanic: (ecē ſcribatua da,* Maradicatua *da* çurean vrkatua den gucia)

Deut.21.23.

14 Abrahamen benedictionea Gentiletara hel ledinçát Ieſus Chriſtez, *eta* Spirituaren promeſſa fedez recebi deçaguncát.

15 Anayeác, guiçonén ançora minço naiz, *Appoinctamendubat guiçon-batena badere, authoritatez confirmatua bada, nehorc eztu hauſten ez emendatzen.

Heb.9.17.

16 Abrahami bada promeſſac erran içan çaizquio, eta haren haciari. Eztu erraitē, Eta haciey, anhitzez *minço* baliz beçala: baina batez beçala, Eta hire haciari, cein baita Chriſt.

17 Haur bada diot, lehenetic Iaincoaz Chriſten reſpectuz confirmatu içan den alliançá, laur-ehun eta hoguey eta hamarvrtherē buruän ethorri içan den Legueac eztuela hauſten, promeſſa aboli deçançát.

18 Ecen baldin heretagea Leguetic bada, ez ia promeſſetic: baina Abrahami promeſſetic eman vkan drauca Iaincoac.

19 Certaco da beraz Leguea? Tranſgreſſionén cauſaz eratchequi içan da, ethor leiteno haci hura ceini promeſſa eguin içan baitzayó, *eta Leguea* ordenatu içan da Aingueruéz, Ararteco baten eſcuz.

20 Eta Arartecoa ezta batena: baina Iaincoa bat da.

21 Leguea beraz Iaincoaren promeſſén contra *eratchequi içan da*? Guertha eztadila. Ecen eman içan baliz Leguea ceinec viuifica ahal le-

çan, segur Leguetic liçate iustitiá.

22 Baina *ertsi vkan du Scripturác gucia bekatuaren azpiã, promessa Iesus Christen fedeaz eman lequiençát sinhesten duteney. Rom.3.9.

23 Bada fedea ethor cedin baino lehen, Leguearen azpian beguiratzen guinen ertsiac reuelatzeco cen federa *heltzeco*.

24 Bada, Leguea gure pedagogo içã da Christgana, fedez iustifica guentecençát.

25 Baina fedea ethorriz gueroztic, ez gara guehiagoric pedagogoren azpian.

26 Ecen guciác Iaincoaren haour çarete Iesus Christ baithango fedeaz.

27 Ecen batheyatu içan çareten guciéc Christ iaunci vkan duçue.

28 Ezta Iuduric ez Grecquic, ezta sclaboric ez libreric, ezta arric ez emeric: ecen çuec gucioc bat çarete Iesus Christean.

29 Eta baldin çuec Christenac *baçarete*, beraz Abrahamen haci çarete, eta promessaren arauez heredero.

## CAP. IIII.

1 *Haour herederoa.* 3. 9 *Munduco elementac.* 5. *Gure adoptionea Christez.* 14 *Paul nola Galatianoéz recebitu.* 22 *Abrahamen bi semeac.* 24. *Agar.* 25 *Sina.* 26 *Ierusaleme.* 28 *Isaac.* 30 *Nescatoaren semeaz eta librearenaz.*

ETa *haur* erraiten dut, Herederoa haour deno, ezta different deusetan cerbitzariaganic, gauça gucié iabe badere: Baina tutorén eta curatorén

azpico da aitáz ordenatu içã çayón dẽborarano
3 Hala gu-ere haourrac guinenean munduco elementén azpiratuac guinén suiectionetan:
4 Baina ethorri içan denean demboraren complimendua, igorri vkan du Iaincoac bere Semea emaztetic eguina, *eta* Leguearen azpico eguina:
5 Leguearen azpico ciradenac redemi litzãçát, Rom.8.15. * haourrén adoptionea recebi gueneçançát.
6 Eta ceren haour baitzarete, igorri vkan du Iaincoac çuen bihotzetara bere Semearẽ Spiritua, oihuz dagoela, Abba, *errã nahi baita*, Aita.
7 Bada guehiagoric ezaiz sclabo, baina semé: eta baldin seme *bahaiz*, Iaincoaren heredero-ere Christez.
8 Baina Iaincoa eçagutzen etzendutenean cerbitzatzẽ centuzten naturaz iainco eztiradenac.
9 Baina orain Iaincoa eçagutzẽ duçuenaz gueroz, baina aitzitic Iaincoaz eçagutu çaretenaz gueroz, nola conuertitzen çarete harçara element infirmoetara eta paubretara, cein ohi beçala cerbitzatu nahi baitituçue?
10 Egunac beguiratzen dituçue eta hilebetheac, eta demborác eta vrtheac.
11 Beldurra dut çueçaz, alfer trabaillatu naicén çuec baithan.
12 Çareten ni beçala: ecen ni-ere çuec beçala *naiz*: anayeác, othoitz eguitẽ drauçuet: ni deussetan eznauçue iniuriatu vkan.
13 Eta badaquiçue nola haraguiaren infirmitaterequin euangelizatu vkan drauçuedan lehen.

14 Eta niçaz ene haraguian *eguiten cen* experiẽtiá eztuçue menoſpreciatu ez arbuiatu vkan, aitzitic Iaincoaren Ainguerubat beçala recebitu vkan nauçue, *bayeta* Ieſus Chriſt beçala.

15 Ceric cen bada çuen dohainontaſſuna? ecen teſtificatzen drauçuet, baldin poſſible içan albaliz, çuen beguiac idoquiric eman cendrauzquedetela.

16 Etſay eguin natzaiçue eguia erraiten drauçuedanean?

17 Çueçaz ieloſſi dirade, ez onetacotz baina aitzitic idoqui nahi çaituztéz berac deſira ditzaçuençát.

18 Baina on da anhitz onheſtea gauça onean bethiere, eta ez ſolament çuec baithan preſent naicenean.

19 Neure haourtoác, ceinéz berriz ertzeco penatan bainaiz, Chriſt forma daiteno çuetan.

20 Nahi nuque orain çuequin içan, eta cambiatu neure voza: ecen dudatan naiz çueçaz.

21 Erradaçue Leguearen azpico içan nahi çaretenéc, Leguea eztuçue ençuten?

21 Ecen ſcribatua da Abrahamec bi ſeme vkã cituela: bat neſcatoaganic, eta bat libreaganic.

23 *Baina neſcatoaganicoa haraguiaren arauez iayo içan cen,* eta libreaganicoa, promeſſaren partez.

Gen. 16.15
Gen. 21.1.

24 Gauça hauc comparationez erraitẽ dirade. Ecen hauc dirade bi alliãçác, bata da Sinaco mẽditic Agar, ſuiectionetara engendratzen duena:

25 (Ecen Sina mendibat da Arabian Ieruſale-

me oraingoari ihardeſten draucanic) eta bere haourrequin cerbitzutan dena:

26 Baina Ieruſaleme gorá, libre da, cein baita gure gucién ama.

*Eſa.54.1.* 27 Ecen ſcribatua da, *Alegueradi ſteril ertzen ezaicená: dendadi eta heyagora eguin ertzeco penan ezaicená: ecen guehiago ditun vtziaren haourrac ecen ez ſenhardunarenac.

*Rom.9.8.* 28 *Gu bada, anayeác, Iſaac beçala promeſſezco haour gara.

29 Baina nola orduan haraguiaren arauez ſorthuac perſecutatzen baitzuen Spirituaren arauez *ſorthua*, hala orain-ere.

*Gen.21.10* 30 Baina cer dio Scripturac? *Egotzquic campora neſcatoa eta haren ſemea: ecen eztic heretaturen neſcatoaren ſemeac librearen ſemearequin.

31 Bada, anayeác, ezgara neſcatoaren haour baina librearen.

CAP. V.

1, 13 *Libertatea. Suiectionea.* 2. *Circonciſionea.* 4 *Fedeaz, iuſtitiá.* 14 *Leguearen ſommarioa.* 15 *Spirituaren arauez ebiltea.* 19 *Haraguiaren obrác.* 22 *Spirituaren fructuac.*

1 BEraz Chriſtec libre eguin gaituen libertatean, çaudete fermu, eta berriz etzaiteztela eduqui ſuiectionezco vztarriaz.

*Act.15.1.* 2 *Huná, nic Paulec erraiten draucet ecen

baldin circoncidi baçaiteztez Chriſt etzaiçuela deus probetchaturen.
3 Eta teſtificatzen draucat berriz circoncidatzen den guiçon guciari, ecen hura Legue guciaren beguiratzera çordun dela.
4 Chriſtez gabetu çarete * Legueaz iuſtificatu nahi çareten gucioc: eta gratiatic erori çarete. 1.Cor.1.17
5 Ecen gu fedetic *den* Spirituaz iuſtitiazco ſperançaren beguira gaude:
6 Ecen Ieſus Chriſtean ez circonciſioneac du deus balio, ezeta preputioac: baina charitatez obratzen duen fedeac.
7 Vngui laſter eguiten cenduten, norc empatchatu çaituztéz, eguia obedi etzeneçaten?
8 Perſuaſione hori ezta çuec deitzen çaituztenaganic.
9 * Altchagarri appurbatec orhe gucia mincē du 1.Cor.5.6.
10 Ni ſeguratzen naiz çueçaz *gure* Iaunean, ecen eztuçuela berce ſendimenduric vkanē: baina çuec trublatzen çaituztenac, ekarriren du condemnationea, norere baita hura.
11 Bada niçaz den becembatean, anayeác, baldin are circonciſionea predicatzen badut, cergatic are perſecutatzen naiz? beraz abolitu da crutzeazco ſcandaloa.
12 Ailitez trenca çuec trublatzen çaituztenac.
13 Ecen, anayeác, çuec libertatera deithu içan çaréte: ſolament *beguirauçue*, libertatea eztén haraguiari occaſionetan: baina elkar charitatez cerbitza eçaçue.

14 Ecen Legue gucia hitz batetan complitzen da, *cein baita*, * Onhetsiren duc eure hurcoa eure burua beçala.

Leuit.19. 18. mat.22.39 marc 12.31 rom.13.9. iac.2.8.

15 Baldineta elkar aussiquiten eta ireften baduçue: beguirauçue bata berceaz consumi eztaitezten.

Ro.13.14. 1.pier.2.11

16 Eta *haur* erraiten drauçuet, * Spirituaren araura ebil çaiteztez: eta haraguiaren guthiciac eztitzaçuela compli.

17 Ecen haraguiac guthiciatzen du Spirituaren contrá, eta Spirituac haraguiaren contra: eta gauça hauc elkarren contra dirade: hala non nahi dituçuen gauça guciac ezpaitituçue eguiten.

18 Baldineta Spirituaz guidatzen baçarete, etzarete Leguearen azpico.

19 Bada, çogueriac dirade haraguiaren obrác, cein baitirade, adulterioa, paillardiçá, satsutassuna, insolentiá,

20 Idolatriá, poçoinqueriá, etsaigoác, bekaizteriác, asserretassunac, liscarrac, diuisioneac, hereśiác,

21 Inuidiác, guiça-erhaitecác, hordiqueriác, gormãdiçác, eta hauc irudiac, gauça hauc aitzinetic erraiten drauzquiçuet, lehen-*ere* erran dudan beçala: ecen halaco gauçác eguitẽ dituztenéc Iaincoaren resumá heretaturen eztutela.

22 Baina Spirituaren fructua da charitatea, alegrançá, baquea, spiritu patienta, benignitatea, ontassuna, fedea, emetassuna, temperantiá.

23 Hunelacoén contra legueric ezta.

24 Ecen Chriſten diradenéc haraguia crucificatu duté affectionéquin eta guthiciéquin.

25 Baldin vici bagara Spirituz, Spirituz ebil-ere gaitecen.

26 Ezgaitecela vana-gloria guthicioſo eguin, elkar tharritatuz, elkargana inuidia vkanez.

## CAP. VI.

*1 Faltatan erorten diradenac nola reprèhenditzeco. 6. Miniſtrén entretenitzeáz. 10 Fedearē domeſticoac. 12 Circoncisionea. 15 Chriſtinoen reglá. 17 Ieſus Iaunaren mercác.*

1 ANayeác, baldineta erori içan bada guiçō-bat cembeit faltatan, çuec ſpiritual çaretenoc goiti eçaçue haina emetaſſunetaco ſpiriturequin: cōſideratzen dualaric eure buruä, hi-ere tenta ezadin.

2 Elkarren cargác egar itzaçue: eta halaz compli eçaçue Chriſten Leguea.

3 Ecen baldin norbeitec vſte badu cerbait dela, deus eztelaric, harc bere fantaſiaz bere buruä enganatzen du.

4 Bada bere obrá experimenta beça batbederac: eta orduan bere baithan gloria vkanen du, eta ez berceric baithan.

5 * Ecēn batbederac bere cargá ekarriren du. 1. Cor. 3. 8.

6 * Bada communica bieçó hitzean iracaſten 1. Cor. 9. 7.

denac, bere iracasleari,on gucietaric.

7 Etzaiteztela engana: Iaincoa ecin escarnia daite: ecen cer-ere ereinen baitu guiçonac, hura bilduren-ere du.

8 Ecen bere haraguiaren ereiten duenac, haraguitic bilduren du corruptione:baina Spirituaren ereiten duenac, Spiritutic bilduren du vicitze eternala.

2.Thes.3.13. 9 *Bada vnguiguitez ezgaitecela enoya: ecen bere sasoinean bilduren dugu, baldin lacho bilha ezpagaitez.

10 Bada dêbora duguno, daguiegun vngui gu-ciey, baina principalqui fedeco domesticoey.

11 Badacussaçue cein letra lucez scribatu drauçuedan neure escuz.

12 Nor-ere nahi baitirade apparent eracutsi haraguian, hec bortchatzen çaituztez circonciditu içatera: solament Christen crutzeagatic persecutioneric suffri ezteçatençát.

13 Ecen circonciditzen diradenéc berec-ere eztute Leguea béguiratzen: baina nahi duté çuec circoncidi çaitezten, çuen haraguian gloria ditecencát.

14 Baina niri guertha eztaquidala gloria nadin Iesus Christ gure Iaunaren crutzean baicen: ceinez mundua niri crucificatu baitzait, eta ni munduari.

15 Ecen Iesus Christean ez circoncisioneac du deusbalio,ez preputioac,baina creatura berriac

16 Eta nor-ere regla hunen araura ebiltẽ baitirade,baquea *içanen da* hayén gainean eta mi-

ſeri cordia, eta Iaincoaren Iſraelen gainean.
17 Hemendic harát nehorc enoyuric eztidala: ecen nic Ieſus Iaunaren mercác dacazquet neure gorputzean.
18 Anayeác, Ieſus Chriſt gure Iaunaren gratiá *dela*, çuen ſpirituarequin. Amen.

*Galatianoey Romaric ſcribatua.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN EPHESIANOETARATCO EPISTOLA.

CAP. I.

*3.16 Iaincoa laudatzen eta regratiatzen. 4 Electionea eternal, eta certara elegitu. 5,11 Predeſtinationea eta adoptionea. 7 Redemptionea. 9 Iaincoaren ſecretua. 13 Euangelioa. 14 Erréſa. 15 Epheſianoén fedea eta charitatea. 17 Sapientiataco ſpiritua. 22 Chriſt Eliçaren buru.*

1 PAul Iaincoaren vorondatez Ieſus Chriſtē Apoſtoluac Ieſus Chriſt *Iaunean* Epheſen diradē * ſainduey eta fideley: 1.Cor.1.2
2 Gratia *dela* çuequin eta baquea Iainco gure Aitaganic, eta Ieſus Chriſt Iaunaganic.
3 * Laudatu *dela* Iaincoa cein baita Ieſus Chriſt 2.Cor.1.3.

gure Iaunaren Aita, ceinec benedicatu baiquaitu benediçoin ſpiritual gucian, ceruëtan Chriſt baithan:

4 Nola elegitu vkan baiquaitu hartan mundua funda cedin baino lehen, ſaindu guinençat eta irreprehenſible haren aitzinean charitatez:

5 Ceinec predeſtinatu vkã baiquaitu bere baithan adopta guẽçançát Ieſus Chriſtez, bere vorondatearen placer onaren araura,

*cein gratiaz.

6 Bere gratiazco gloriarẽ laudoriotan, *ceinez bere gogaraco eguin baiquaitu *bere* maitean.

7 Ceinetan baitugu redemptionea haren odolaz, *cein baita* bekatuén barkamendua haren gratiazco abraſt aſſunaren araura:

*cein gratiataric.

8 *Ceinetaric gaindi eraguin baitu abundoſqui gure gainera ſapientia eta intelligentia gucitan:

9 Guri eçagut eraciric bere vorondatearen myſterioa, bere placer onaren araura, cein lehẽdanic ordenatu baitzuen bere baithan:

10 Demborén complimenduaren diſpenſationean gucién elkargana biltzera Chriſteã, hambat ceruëtan diradenén nola lurrean, hura bera baithan:

11 Ceinetan eguin-ere baicara haren heretage, predeſtinatu içanic, haren ordenançaren araura, ceinec gauça guciac eguiten baititu bere vorondateco conſeilluaren araura.

12 Haren gloriaren laudoriotaco garençát, lehenetaric Chriſt baithan ſperança vkan dugunoc.

13 Ceinetan çuec-ere *sperança vkan baituçue* eguiazco hitza ençun vkanic, *cein baita*, çuen saluamendutaco Euangelioa: ceinetan sinhetsiere vkanic, ciguilatu içan baitzarete promessaren Spiritu sainduaz:

14 Cein baita gure heretagearen erréfa, haren possessione conquestatuaren redemptionerano haren gloriaren laudoriotan.

15 Halacotz ni-ere ençunic Iesus Iaunean duçuen fedea, eta saindu gucietaraco charitatea,

16 Eznaiz guelditzen çuengatic gratién rendatzetic, mentione çueçaz eguiten dudala neure othoitzetan.

17 Iesus Christ gure Iaunaren Iaincoac, Aita gloriazcoac diçuençát sapientiataco eta reuelationetaco Spiritua, haren eçagutzearen vkaiteco:

18 Çuen adimenduco beguiac illuminaturic: daquiçuençát ceric den haren vocationearen sperançá, eta ceric *den* haren heretageco gloriaren abrastassuna sainduetan:

19 Eta ceric den haren botherearen handitassun excellenta sinhesten dugunotara, * haren bothere borthitzaren operationez,

*Colos.2.12. berriz.3.7.*

20 Cein eracutsi vkan baitu Christ baithan, hura hiletaric resuscitaturic eta iar eraciric bere escuinean ceruëtan,

21 Principaltassun, eta puissança, eta verthute, eta dominatione ororen garayan, eta ez sola-

ment secula hunetan baina ethortecoã-ere aippatzen den icen ororen *garayan.*

22 Eta gauça guciac haren oinén azpico suiet eguin vkan ditu, eta bera eçarri vkan du gauça ororen garayan Eliçaren buru içateco:

*Cein, eliça 23 * Cein baita haren gorputz, *eta* gauça guciac gucietan complitzen dituenaren complimendu.

CAP. II.

*1 Gentilen bekatuéz. 4 Deliurançá Christez. 6. Resuscitatu gaitu Iaincoac eta iar eraci Christequin. 8. Saluatu fedez. 17 Euangelizatu baquea Iuduey eta Gentiley. 19 Gentilac sainduén burgesquide. 21, 22 Iaincoaren temple eta tabernacle.*

*Colos.2.13* 1 ETa *çuec *viuificatu çaituzte* hilac cinetelaric faltetan eta bekatuetan:

2 Ceinétan noizpait ebili içan baitzarete mũdu hunen cursuaren araura, airearen bothereco * princearen araura, cein baita desobedientiazco haourretan orain obratzen duen spiritua: *Berriz.6.11.*

*Ceinén, desobedientén.* 3 *Ceinén artean guc guciec-ere noizpait conuersatu vkan baitugu gure haraguiaren guthicietan eguiten guentuela, haraguiaren eta gure pensamẽduén desirac: eta naturaz hiraren haour guinén berceac-ere beçala.

4 Baina Iainco misericordiaz abratsac bere charitate handi gu onhetsi gaituenagatic,

5 Eta bekatuz hilac guinelaric, elkarrequin,* Christez viuificatu vkan gaitu, *ceinen* gratiaz saluatu içan baitzarete:

*elkarrequin, Iuduac eta Gentilac.

6 Eta resuscitatu vkan gaitu elkarrequin eta iar eraci ceruëtan Iesus Christean.

7 Eracuts leçançát ethorteco diraden seculetan bere gratiaren abrastassun abundanta *bere* gureganaco benignitateaz Iesus Christean.

8 Ecen gratiaz saluatu içan çarete fedearen moienez: eta hori ez çuetaric: Iaincoaren dohaina *da*:

9 Ezobréz, nehor gloria eztadinçát.

10 Ecen haren obrá gara Iesus Christean creatuac obra onetara, cein preparatu baititu Iaincoac hetan ebil guentecençát.

11 Halacotz, orhoit çaitezte nola çuec noizpait Gentilac haraguian, Preputio deitzen baitzineten, haraguian Circoncisione deitzen denaz *eta* escuz eguiten denaz,

12 Baitzineten dembora hartan Christ gabe, Israeleco republicarequin deus cõmunic etzindutelaric, *eta promessaren alliancetaric estranger, sperançaric etzindutelaric, eta Iainco gabe munduan *cinetelaric*:

*Rom. 9.4.

13 Baina orain Iesus Christean, çuec noizpait baitzineten vrrun, hurbildu içan çarete Christen odolaz.

14 Ecen hura da gure baquea, biac bat eguin dituena, eta bién arteco paretarẽ cerraillua haut-

ſi duena:

Coloſſ.2.14 15 *Bere haraguiaz abolituric etſaigoá, *cein baita,* manamenduetaco leguea, ordenancetan *conſiſtitzen dena,* biéz bere baithan guiçon berribat eguin leçançát, baquea eguiten luela.

16 Eta biac gorputz batetan recōcilia lietzonçat, Iaincoari crutzeaz, hartan etſaigoá deſeguinic.

17 Eta ethorriric euangelizatu vkan drauçue baquea, çuey vrrungoey, eta hæy hurbilecoey.

Rom.5.2. 18 *Ecen harçaz dugu biéc Spiritu batetan ſartze Aitagana.

19 Etzarete beraz guehiagoric eſtrangér eta campoco, baina ſainduén burgeſquide, eta Iaincoaren domeſtico:

20 Apoſtoluén eta Prophetén fundament gainean edificatuac, ceinen *har* cantoin principala baita Ieſus Chriſt bera:

21 Ceinetan edificio gucia elkarri eratchequiric, handitzen baita, temple ſaindu içateco Iaunean:

22 Ceinetan çuec-ere elkarrequin edificatzen baitzarete Iaincoaren tabernacle çaretençát, Spirituaz.

CAP. III.

*1 Paul Gentiletara embachadore. 8 Iaincoaren abraſtaſſun Chriſtezcoac. 9 Iaincoaren myſterioa eta ſapientiá. 12 Libertate eta confidança noren moyenez dugun. 13 Paulen othoitzá Gentilacgatic. 20 Eſquer eta laudorio emaite.*

1 CAusa hunegatic ni Paul Iesus Christé presonér *naiz* cuengatic, *baitzarete* Gentil.
2 Baldin behinçat ençun vkan baduçue çuec baithara emã içan çaitadan Iaincoaré gratiaren dispésationea.
3 Nola *Iaincoac* reuelationez eçagut eraci drautan mysterioa (lehen hitz gutitan scribatu drauçuedan beçala:
4 Haren iracurtzetic eçagut ahal deçaqueçue ceric den ene eçagutzea Christen mysterioan.)
5 Cein ezpaita eçagutu içan guiçonén seméz iragan generationetã, orain reuelatu içan çayen beçala haren Apostolu eta Propheta sainduey Spirituaz:
6 *Ecen* Gentilac diradela herederoquide eta gorputz batetaco bereco eta haren promessean participant Christean Euangelioaz.
7 Ceinen ministre eguin içan bainaiz Iaincoaren gratiaren dohainaré arauez, cein eman içan baitzait *haren bothereareren operationearen arauez.
8 *Niri *bada* saindu gucietaco chipienari eman içan çait gratia haur, *Gentilén artean Christen abrastassun comprehendi ecin daitenaren euangelizatzeco,
9 Eta guciey manifestatzeco ceric *den* *mysterio bethidanic Iaincoa baithan estalia cenaren communionea, ceinec gauça guciac creatu baithitu Iesus Christez:
10 Orain manifesta daquiençat Eliçáz ceruë-

*Lehen* 1.19
1.*Cor*.15.9
*Gal*.1.16.
*Rom*.16.25
*coloss*. 1.26.
2.*tim*. 1.10
*tit*.1.2.
1.*pier*.1.20

taco principaltaſſuney eta botherey Iaincoaren ſapientia anhitz maneraz diuerſa:
11 Ieſus Chriſt gure Iaunean eguin vkan duen ordenança eternalaren araura:
*Ceinez, Chriſtez,
12 *Ceinez baitugu libertate eta ſartze confidançarequin,hura baithan dugun fedeaz.
13 Halacotz,nago requerimenduz etzaitezten enoya ene çuengatico afflictioneacgatic, cein baita çuen gloriá.
14 Cauſa hunegatic gurtzen ditut neure belhaunac Ieſus Chriſt gure Iaunaren Aitagana,
15 Ceinaganic ahaidetaſſun gucia ceruëtan eta lurrean deitzen baita,
16 Eman dieçaçuençát, bere gloriaren abraſtaſſunaren arauez, indarrez fortifica çaitezten haren Spirituaz barneco guiçonean:
17 Eta habita dadin Chriſt fedez çuen bihotzetan:
18 Charitatean erro eguinic eta fundaturic, comprehendi ahal deçaçuen ſaindu guciequin ceric *den* çabaltaſſuna eta lucetaſſuna,barnataſſuna eta gorataſſuna:
19 Eta eçagut deçaçuen Chriſten amorio eçagutze gucia iragaiten duena: compli çaitezten-çát Iaincoaren complimendu gucian.
20 Bada gutan obratzen duen bothereaz gauça gucién eguitera, eſcatzen garen edo penſatzen dugun baino abundantquiago botheretſu denari,
21 *Déla* gloria Eliçán Ieſus Chriſtez, generatione gucietan ſecula ſeculacotz. Amen.

CAP. IIII.

*1, 17 Obra onetara exhortatzen. 4 Gorputzbat eta ſpiritubat. 6 Bat gucién Aita. 7 Dono diuerſac eta miniſterioac Eliçán, cein baita haren gorputz. 22 Guiçon çaharra eta berria. 25 Eguia eta gueçurra. 26 Aſſerretzea. 28 Ez ebaiſteco, baina trabaillatzeco. 29 Hitz ona. 31 Chriſtinoén vicitzea nolaco içateco.*

1 O Thoitz eguitē drauçuet bada nic, bainaiz preſoner *gure* Iaunean, * ebil çaitezten deithu içan çareten vocationeari dagocan beçala, — *Philip.1.27 coloſſ.1.10. 1 theſſ.2.12*

2 Humilitate eta emetaſſun gucirequin, ſpiritu patient batequin, elkar ſupportatzen duçuelaric charitatez:

3 Arthatſu çaretelaric Spirituaren vnitatearen beguiratzera baquezco lotgarriaz.

4 Gorputzbat *da* eta Spiritubat, deithu-ere içā çareten beçala çuen vocationearen ſperança batetara:

5 Iaun-bat, Fedebat, Baptiſmobat:

6 *Gucién Iainco eta Aitabat, cein baita gucién gainean, eta gucién artean, eta çuetan guciotan. — *Mala.2.10*

7 *Baina gutaric batbederari gratia eman içan çayó Chriſten dohainaren neurriaren araura. — *Rom.12.5. 1.cor.12.11 2.cor.10.13*

8 Halacotz dio, *Goiti iganic captiuo eraman vkan du captiuitatea, eta eman drauzte dohainac guiçoney. — *Pſal.68.19.*

9 Eta igaite hura cer da, lehen lurreco parte behera hautara iautſi-ere dela baicen?

10 Iautſi içan den hura bera da igan-ere dena

ceru gucién garaira, gauça guciac bethe litzan-çát.

1.Cor.12. 27.

11 Harc bada eman ditu batzu, *Apostolu *içateco*: eta berceac, Propheta: eta berceac, Euangelista: eta berceac, Pastor eta Doctor *içateco*,

12 Sainduén elkarganatzeagatic, ministerioaren obracotzát, Christen gorputzaren edificationetan,

13 Guciac rencontra gaitezqueno fedearen, eta Iaincoaren Semearen eçagutzearen vnitatean, guiçon perfectotan, Christen adin perfecteco neurrira:

14 Guehiagoric haour ezgarençát balençán ebilteco, eta doctrinataco haice oroz hara huna guiçonén enganioz, eta hayén finecia cautelosqui enganagarrizcoz erabili içateco.

15 Baina eguiari garreitzalaric charitaterequin, gucietan handi gaitecen hartan, cein baita burua, Christ:

16 Ceinetaric gorputz guciac vngui iunctaturic, eta fornidurarē iunctura guciéz elkarrequin iossiric, membroetaric batbederaren neurrico indarraren araura hartzen baitu gorputzeco hacitze, bere buruären edificationetan charitatez.

Rom.1.21.

17 Haur bada erraiten dut, eta Iaunaz requeritzen çaituztet, guehiagoric etzaitezten ebil *berce Gentilac dabiltzan beçala berén adimenduco vanitatean,

18 Adimenduz ilhunduac diradelaric eta Iaincoaren vicitzetic appartatuac, hetā berén bihotzeco gogortassunetic den ignorātiaren causaz:

19 Eta ſendimendu gabeturic, bere buruac abandonnatu vkan dituzté diſſolutionetara, cithalqueria ororen eguitera, appetitu deſordenaturequin.
20 Baina çuec eztuçue hala ikaſſi vkan Chriſt:
21 Baldin behinçát hura ençun vkan baduçue, eta harçaz iracatſiac baçarete, eguiá Ieſus baithan den beçala:
22 Ken deçaçuen leheneco conuerſationeaz den becembatean guiçon çaharra, enganagarrizco guthicién araura corrumpitzen dena:
23 Eta arramberri çaitezten çuen adimenduco ſpirituan:
24 *Eta iaunz deçaçuen guiçon berria, cein Iaincoaren araura creatu içan baita iuſtitiatan eta eguiazco ſaindutaſſunetan.
*Rom.6.4. coloſſ.3.8. 2.tim.2.11. hebr.12.1. 1.pier.2.1.*
25 *Halacotz, gueçurra kenduric, minça çaiteztez eguiaz batbedera cein çuen hurcoarequin: ecen elkarren membro gara.
*Zach.8.16.*
26 *Aſſerre çaiteztez, eta bekaturic eztaguiçuela: iguzquia eztadila etzin çuen aſſerretaſſunaren gainean:
*Pſal.4.5.*
27 *Eta lekuric eztemoçuela deabruari.
*Iacq 4.7.*
28 Ebaiſtẽ çuenac ezteçala guehiagoric ebats: baina aitzitic trabailla bedi on daten gauçaric eguiten duela, beharra duenari emaiteco duençát.
29 *Hitz corrumpituric batre çuen ahotic ilki eztadila, baina cembeit bada, edificationearen vſançaco on datenic, ençuten duteney gratia eman diecençát.
*Berriz 5.3.*

30 Eta ezteçaçuela contrista Iaincoaren Spiritu saindua, ceinez ciguilatuac baitzarete redemptioneco egunecotzát.

31 Samindura eta colera, eta hira, eta oihu, eta gaitzerraite gucia çuetaric ken bedi, malitia gucirequin.

32 Baina çareten elkargana benigno, misericordioso eta elkarri barkaçale, Iaincoac Christez barkatu vkan drauçuen beçala.

CAP. V.

*1 Christen araura ebilteco. 3 Hitz saindux minçatzeco. 8 Arguizco obretara exhortatzen. 13 Ilhumbearen manifestationea. 18 Ezhorditzeco. 19 Cantu eta laudorio Iaincoari. 21 Elkarren suiet içateco. 22, 25 Senhar emaztén instructionea. 30 Christen gorputzeco membro.*

*Matt.5.43* 1* CAreten bada Iaincoaren imitaçale haour maite anço:

*Ioan 13.24 eta 15.12. ioan 3.23.* 2* Eta ebil çaitezte charitatean Christec-ere onhetsi vkan gaituen beçala, eta liuratu vkan baitrauca bere burua guregatic oblatione eta sacrificio Iaincoari, vssain onezco vrrinetan

*Leben.4.19 colos.3.5. 2.thes.2.17* 3 *Bada, paillardiça eta cithalqueria gucia, edo auaritiá aippa-ere eztadila çuen artean, nola appartenitzen baitzaye sainduey:

4 Edo gauça deshonestic, edo hitz erhoric, edo burlaqueriaric, baitirade gauça vngui eztaudenac, baina aitzitic gratién rendatzeric.

5 Ecen badaquiçue haur, ecen eceinere paillartec,

tec, edo cithalec, edo auaritiosoc, cein baita idolatre, eztuela heretageric Chriſten eta Iaincoaren reſumán.

6 *Nehorc etzaitzatela hitz vanoz engana: ecen gauça haucgatic ethorten da Iaincoaren hirá deſobedientiazco haourrén gainera.

Matt.24.4 marc 13.5. luc 21.8. 2.theſſ.2.3.

7 Etzaretela bada hequin parçonér.

8 Ecen noizpait ilhumbe cineten, baina orain argui çarete *gure* Iaunean: arguizco haour anço ebil çaitezte:

9 (Ecen Spirituaren fructua *conſiſtitzen da* ontaſſun eta iuſtitia eta eguia gucitan)

10 Experimentatzen duçuelaric Iaunari placent çayona cer den.

11 Eta ezteçaçuela communica ilhumbearen obra fructu gabetan, baina aitzitic reprehendiere itzaçue.

12 Ecen heçaz ichilic eguiten diraden gaucén erraitea-ere deshoneſtate da.

13 Baina gauça guciac, camporatzen diradenean arguiaz, manifeſtatzen dirade: ecen gucia manifeſtatzen duena, arguia da.

14 Halacotz erraité du, Iratzar adi lo atzaná, eta iaiqui adi hiletaric, eta arguituren au Chriſtec.

15 *Gogoauçue bada nola çuhurqui ebil çaitezqueten, ez erho anço, baina çuhur anço:

Coloſſ.4.5.

16 Recrubatzen duçuelaric demborá: ecen egunac gaitz dirade.

17 *Halacotz, etzaretela çuhurtzia gabe, baina aditzale ceric den Iaunaren vorondatea.

Rom.12.2. 1.theſſ.4.3.

18 Eta etzaiteztela hordi mahatſarnoz, ceine-

tan dissolutione baita: baina bethe çaitezte Spirituaz:

19 Minçatzen çaretela çuen artean psalmuz, laudorioz eta cantu spiritualez: cantatzen eta resonatzen draucaçuela Iaunari çuen bihotzean.

20 Gratiac-ere rendatzen drautzaçuela bethiere gauça guciéz, Iesus Christ gure Iaunaren icenean, *gure* Iainco eta Aitari:

21 Elkarren suiet çaretelaric Iaincoaren beldurrequin.

Coloss. 3.18 tit. 2.5. 1. pier. 3.1.

22 *Emazteác, çuen senharrén çareten suiet, Iaunaren beçala:

1. Cor. 11.3

23 *Ecen senharra da emazteare buru, Christere Eliçaren buru den beçala, eta hura da gorputzaren saluadorea.

24 Bada, nola Eliçá baita Christen suiet, hala emazteac-ere *diraden* bere senharrén *suiet* gauça gucietan.

Coloss. 3.19

25 *Senharrác, çuen emaztey on erizteçue, Christec-ere Eliçari on eritzi draucan beçala, eta bere buruä eman vkan baitu harengatic:

26 Hura sanctifica leçançát, purificaturic vrezco ikutzez hitzaz.

27 Hura beretaco Eliça glorioso eguin leçançát, macularic ez cimurduraric gabe, ez halaco berce gauçaric: baina licén saindu eta irreprehensible.

28 Hala senharréc on eritzi behar drauece bere emaztey nola bere gorputzey: bere emazteari on daritzanac, bere buruäri on daritza.

29 Ecen nehorc egundano bere haraguiari eztrauca gaitz eritzi: baina hatzen eta entreteni-

tzen du hura, Iaunac-ere bere Eliçá beçala:

30 Ecen haren gorputzeco membro gara, haren haraguitic eta haren heçurretaric.

31 *Halacotz, vtziren ditu guiçonac aita eta ama eta iunctaturen çayó bere emazteari: eta biac haraguibat içanen dirade.

Gene.2.24. matt.19.5. marc 10.7. 1.cor.6.16.

32 Mysterio haur handia da: baina ni Christez minço naiz eta Eliçáz.

33 Hunegatic, çuec-ere *eguiçue* çuen aldetic batbederac hala on daritzón bere emazteari nola bere buruäri: eta emaztea bere senharraren beldur biz.

CAP. VI.

*1 Haourrén instructionea. 4 Aitéz. 5 Cerbitzariéz. 9 Nabussiéz. 11 Iaincoaren harméz veztitzeco. 16 Fidelē harmadurác. 18 Ardura othoitz eguiteco. 20 Paul presonér. 21 Tychique Ephesianoetara igorri. 23 Baque, charitate eta fede Ephesianoey desiratzen.*

1 HAourrác, *obeditzáçue Iaunean çuen aita eta ama: ecen haur gauça iustoa da.

Coloss.3.20

2 *Ohoraitzac eure aita eta eure ama (cein baita lehen manamendua promessequin)

Exo.20.12. deut.5.16. eccl.3.9. matt.15.4. marc 7.10.

3 Vngui hel daquiançát eta vicitze luceetacô aicençát lurraren gainean.

4 Eta çuec aitéc eztitzaçuela prouoca despitetara çuē haourrac, baina haz itzaçue instructionetan eta Iaunazco remonstrationetan.

5 *Cerbitzariác, obeditzaçue haraguiaren arauez *çuen* nabussi diradenac, beldurrequin eta

Coloss.3.22. tit.2.9. 1.pier.2.18

ikararequin, çué bihotzeco ſimplicitaterequin, Chriſt beçala.

6 Ez beguicotzat cerbitzatzen dituçuela, guiçonén gogara eguin nahi bacẽdute beçala, baina Chriſten cerbitzari beçala, eguiten duçuelaric Iaincoaren vorondatea gogotic.

7 Affectione onequin cerbitzatzen duçuelaric Iauna, eta ez guiçonac:

8 Daquiçuelaric haur, ecen batbederac cerere vngui eguin baituque, hura recebituren duquela, ala den ſclaboc ala librec.

9 Eta çuec nabuſſiéc, hura bera eguiçue hetara, vtziric mehatchuac: daquiçuelaric ecen hayén eta çuen Iauna ceruëtan dela, *eta perſonén acceptioneric eztela hura baithan.

Deu. 10. 17
2. chro. 19. 7
iob 34. 19.
ſap. 6 8.
eccl. 35. 16.
act 10. 34.
rom. 2. 11.
gal. 2. 6.
coloſſ 3. 25.
1. pier. 1. 17.

10 Gaineracoaz, ene anayeác, fortifica çaitezte *gure* Iaunean, eta haren indarrarẽ botherean.

11 Iaunz eçaçue Iaincoaren harmadura gucia, deabruarẽ celatén cõtra reſiſti ahal deçaçuẽçát.

12 Ecen eztugu borrocá *odolaren eta haraguiaren contra, baina principaltaſſunén contra, puiſſancén contra, munduco iaunén, ſecula hunetaco ilhumbearen *gobernadorén* contra, leku celeſtialetan *diraden* malitia ſpiritualén contra.

Leben 2. 1.

13 Harren, har eçaçue Iaunarẽ harmadura gucia, reſiſti ahal deçaçuençát egun gaitzean, eta guciey garaithuric fermu çaudeten.

14 Çareten bada fermu, çuen guerrunceac eguiáz guerricaturic, eta iuſtitiazco halacreta iaunciric:

15 Oinetan iaunciric baquezco Euangelioaren

preparationea.

16 Gucién gainetic fedezco broquela harturic, ceinez Gaichtoaren gueci ſuz eraichequi guciac iraungui ahal ditzaçuen.

17 *Saluamendutaco caſqueta-ere har eçaçue, eta Spirituaren ezpatá, cein baita Iaincoaren hitza.

*Eſa 59.17. 1.theſſ.5.8.*

18 Oratione mota oroz eta ſupplicationez othoitz eguiten duçuela dembora gucian ſpirituz, eta hartara iratzarri çaudetela perſeuerança gucirequin eta ſupplicationerequin, ſaindu guciagatic,

19 *Eta enegatic, minçatzea eman daquidãçát neure ahoaren irequiteco libertaterequin, notifica deçadançát Euangelioaren myſterioa,

*Coloſſ.4.3. 1.theſſ.3.1.*

20 Ceinen cauſaz bainaiz embachadore cadenán, harçaz frangoqui minça nadinçát, minçatu behar dudan beçala.

21 Eta daquizquiçuençát çuec-ere ene eguitecoac, *eta ni* cer ari naicén, Tychique gure anaye maiteac eta *gure* Iauneã miniſtre fidelac, gauça guciac notificaturen drauzquiçue:

22 Cein harèngatic beragatic igorri vkan baitut çuetara, iaquin ditzaçuençát gure eguitecoac, eta conſola ditzançát çuen bihotzac.

23 Baquea *dela* anayeoquin, eta charitatea federequin Iainco Aitaganic eta Ieſus Chriſt Iaunaganic.

24 Gratia *dela* Ieſus Chriſt gure Iaunari puritatetan on daritzaten guciequin.

*Epheſianoetara ſcribatua Romaric Tychiquerequin.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN PHILIPPIANOETARATCO EPISTOLA.

CAP. I.

*1 Esquerrac Paulec rendatzen. 8 Haren Philippianoetaratco affectionea. 12, 20 Haren emprisonamenduaz den fructua. 14 Anhitz aldez Christ predicatzen. 21 Paulec Christequin içatera desiratzen. 27 Euangelioaren araura vicitzera exhortatzen.*

1 PAVLEC eta Timotheoc Iesus Christen cerbitzariéc Iesus Christ *Iaunean* Philippesen diraden saindu guciey Ipizpicuequin batean eta Diacrequin,

2 Gratia *dela* çuequin eta baquea Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ Iaunaganic.

3 Esquerrac emaiten drauzquiot neure Iaincoari *çueçazco orhoitzapen handirequin, (1.Thess.1.2)

4 (Bethiere neure oratione gucietã çuẽ gucion-gatic bozcariorequin othoitze eguiten dudala)

5 Ceren Euangelioren communionera ethorri içan çareten, lehen egunetic oraindrano:

6 Huneçaz seguratzen naicela, ecen obra ona çuetan hassi vkan duenac acabaturẽ duela Iesus Christen egunerano:

7 Nola raçoina baita nic haur estima deçadan çueçaz gucioz, cerẽ bihotzean baitzadutzatet, eta ene estecaduretan, eta defensionean eta Euangelioaren confirmationean çuec gucioc enequin baitzarete participant ene gratian.

8 Ecen Iaincoa dut testimonio cein cinez desiratzen çaituztedan çuec gucioc Iesus Christen affectione cordialez:

9 Eta hunez othoiztez nago, çuen charitatea oraino guehiago eta guehiago abunda dadin eçagutzerequin eta iugemendu gucirequin:

10 Gauça contrarioac discerni ditzaçuençát: pur eta trebucu gabe çaretençát Iesus Christen egunerano:

11 Iesus Christez Iaincoaren gloriatan eta laudoriotan *diraden* fructuz betheac çaretelaric.

12 Eta nahi dut daqui çuen, anayeác, ecen niri *heldu çaizquidan* gauçác Euangelioaren auançamendutarago ethorri içan diradela:

13 *Hambat* non ene estecadurác famatu içan baitirade Christ *Iaunean* Pretorio gucian eta berce *leku* gucietan:

14 Eta anayetaric anhitz *gure* Iaunean ene estecaduréz asseguraturic, ausartquiago hitzaz minçatzera hauçu baitirade.

15 Eta batzuc behinçát inuidiaz eta contentionez, eta bercéc vorondate onez-ere Christ predicatzen duté:

16 Batzuc, *diot*, contentionez Christ denuntiatzen duté ez purqui, ene estecadurác afflictionez emendatu vstez:

17 Baina bercéc charitatez, daquitelaric ecen Euangelioaren defensionetan eçarri içan naicela.
18 Cer bada? nola-ere baita, bada fictionez, bada eguiaz, Christ predicatzen da: eta hunetan algueratzen naiz, eta algueraturen-ere.
19 Ceren baitaquit, ecen haur ethorriren çaitadala saluamendutara çuen orationéz, eta Iesus Cristen Spirituaren aiutáz,
20 Ene iguriquite fermuaren eta sperançaren araura, ecen deusetan eznaicela confus içanen, aitzitic libertate gucirequin bethiere beçala, orain-ere magnificaturen dela Christ ene gorputzean, vicitzez bada hiltzez bada.
21 Ecen niri Christ irabaizte çait vicitzera eta hiltzera.
22 Ala haraguian vicitzera probetchu dudanez, eta cer hauta deçaquedan, eztaquit.
23 Ecen hertsen naiz alde bietaric, desir dudalaric partitzera eta Christequin içatera: ecen *haur* vnguiz hobeago dut:
24 Baina haraguian egon nadin necessarioago *da* çuengatic.
25 Eta haur seguratuqui badaquit, ecen egonen naicela eta perseueraturen dudala çuequin gucioquin çuen auançamendutan, eta *çuen* fedearen bozcariotan.
26 Abunda dadinçát çuen gloriationea Iesus Christeá niçaz, ene berriz çuetaraco ethorteaz.
*Ephe.4.1. coloss.1.10. 1.thess.2.12*
27 *Solament Christen Euangelioari dagocan beçala conuersa eçaçue, bada ethor nadin eta

ikus çaitzatedan, bada abſent naicén, adi deçadan çuen eguitecoez , ecen perſeueratzen duçuela ſpiritu batetan, gogo batez elkarrequin Euangelioaren fedeaz combatitzen çaretelaric, eta contraſtez deuſetã icitzen etzaretelaric:
28 Cein baita hayén perditionetaco ſeignale, eta çuen ſaluamendutaco, eta haur Iaincoaganic.
29 Ecen çuey eman içan çaiçue Chriſtgatic, ez ſolament hura baithan ſinheſtea, baina harengatic ſuffritzea-ere:
30 Nitan ikuſſi duçuen, eta orain ençuten duçuen combat bera duçuela.

## CAP. II.

*1 Vnionera eta charitatera exhortatzen, 12 Eta ſaluamenduan emplegatzera. 13 Vorondatea eta eguitea Iaincoaganic. 14 Murmurationey eta queſtioney ihes eguiteco. 19 Timotheo hetara igorri gogo. 25 Epaphrodite Philippianoen Apoſtolu.*

1 BAda baldin conſolationeric batre *bada* * Chriſteã, baldin charitatezco ſolageamẽduric batre , baldin ſpirituzco communioneric batre, baldin affectione cordialic eta miſericordiaric batre *bada*,

* *Chriſtean diot, chriſti norenic,*

2 Compli eçaçue ene bozcarioa, ſendimendu ber-bat duçuelaric, charitate ber-bat duçuelaric,gogo ber-batetaco eta conſentimendu ber-

batetaco çaretelaric.

3 Deus eztadila contentionez edo vana glo-
Rom. 12. 10. riaz *eguin*, * baina bihotzetico humilitatez ba-
tac bercea bere buruä baino excellentago esti-
ma beça.

4 Etzaudetela batbedera cein çuen commodi-
tatetara behá, baina bercerenetara-ere.

5 Bada biz çuetan Iesus Christ baithan-ere içã
den affectionea.

6 Ceinec Iaincoaren formán celaric ezpaitu
estimatu harrapatze Iaincoaren bardin içatea:

7 Badaric-ere bere buruä ezdeustu vkan du,
cerbitzari forma harturic, guiçonén irudico e-
guin içanic, eta formaz eriden içanic guiçon
beçala:

Heb.2.9 8 * Bere buruä beheratu vkan du obedient e-
guin içanic heriorano, are herio crutzecorano.

9 Halacotz Iaincoac-ere hura subiranoqui go-
ratu vkan du, eta icen-bat eman vkan drauca i-
cen gucién gaineco denic:

Esa.45.23. rom.14.11. 10 * Iesusen icenean ceruëtacoén eta lurrecoén
eta luppecoén belhaun gucia gur dadinçát:

Ioan.13.13 1. cor.8. 6. eta 12.3. 11 Eta mihi guciac confessa deçan * ecen Iaun
*dela* Iesus Christ, Iainco Aitaren glorián.

12 Hunegatic, ene maiteác, bethiere obeditu
vkan duçuen beçala, ez ene presentián beçala
solament, baina orain vnguiz guehiago ene ab-
sentián, beldurrequin eta ikararequin emplega
çaitezte çuen saluamenduan.

13 Ecen Iaincoa da eguiten duena çuetan eta
nahi vkaitea eta eguitea, bere placer onaren a-

raura.

14 Gauça guciac eguin itzaçue * murmuratzeric eta queſtioneric gabe: 1.Pier.4.9.

15 Çaretençát reprotchu baguetaco eta ſimple, Iaincoaren haour irreprehenſible, natione bihurriaren eta gaichtoaren artean, * ceinén artean argui egui çue torchoéc beçala munduan, vicitzetaco hitza aitzinera ekarten dutenén ançora: Mat.5.16. 1.pier.2.12

16 Gloria ahal nadinçát Chriſten egunean, ecen eztudala alfer laſter eguin, ez alfer lā eguin:

17 Eta baldin çuen fedearen ſacrificio eta cerbitzu gainera ſacrificabanadi-ere, aleguera naiz eta çuen gucion onaz aleguera naiz.

18 Çuec-ere halaber çareten aleguera, eta aleguera çaitezte ene onaz.

19 Eta ſperança dut Ieſus Iauneā, * Timotheo ſarri igorriren drauçuedala, nic-ere gogo on dudançát çuen eguitecoac eçaguturic. Act. 16.1.

20 Ecē eztut nehor hain gogo bardinetacoric, eguiaz çuen eguitecoéz arrangura duqueenic.

21 *Ecen guciac bere gaucey iarreiquiten çaizté, ez Ieſus Chriſteney. 1.Cor.10.24.

22 Baina harçazco experientiá eçagutzen duçue, nola, ſemeac aitá *cerbitzatzen duen* beçala, enequin cerbizatzen ari içan den Euangelioan.

23 Hura bada ſperança dut igorriren drauçuedala, neure eguitecoey dreçu eman drauquedan ſarrienaz.

24 Eta ſeguratzen naiz Iaunean, ecen neurorere ſarri ethorriren naicela çuetara.

25 Baina necessario cela estimatu vkã dut çuetara igortera Epaphrodite anayea eta aiutaçalea eta guerlaco neure laguna, çuen Apostolu-ere dena, eta nic behar vkan dudanaren administraçalea.

26 Ecen *harc* çuec gucioc desiratzẽ centuzten, eta guciz desplacer çuen ceren eri içan cela aditu vkan baitzenduten.

27 Eta segur eri içan da hiltzeco statuan: baina Iaincoac misericordia eguin vkan drauca, eta ez hari solament baina niri-ere, tristitia tristitiaren gainera eznuen çát.

28 Bada, *hambat* affectione handizago hura igorri vkan dut, hura ikussiric berriz aleguera çaiteztençát, eta nic hambat tristitia gutiago dudançát.

29 Recebi eçaçue bada hura *gure* Iauneã bozcario gucirequin: eta halaco diradenac estimatan eduquitzaçue.

30 Ecen Christen obragatic heriorano hurbildu içan da, *bere* vicia abandonnaturic, suppli leçançát çuen ene baitharaco cerbitzu peitua.

## CAP. III.

*2 Iuduetaric beguiratzera exhortatzen. 9 Iaincoaren eta Leguearen iustitiá. 11 Resurrectionera heltzera Paulec desiratzen. 16 Gogo batetaco içatera exhortatzen. 18 Christen crutzearen etsaiac. 20 Conuersationea ceruëtan.*

1 GAïneracoaz den becembatean, ene anayeác, aleguera çaitezte Iaunean: Gauça berén çuey scribatzera niri etzait herabe, eta cuē segurançá da.

2 Gogoa eyeçue orey, gogoa eyeçue obrero gaichtoey, gogoa emoçue concisioneari.

3 Ecen gu gara Circoncisionea, Iaincoa spirituz cerbitzatzen dugunoc, eta gloriatzen garenoc Iesus Christean eta haraguian confidançaric eztugunoc:

4 Nic cerçaz haraguian-ere confidança dudan badut-ere. Baldin cembeit bercec vste badu cōfidançaric duela haraguian, nic guehiago.

5 *Bainaiz* çortzi garreneco egunean circonciditua, *bainaiz* Israel arraçatic, Beniaminen leinutic, *Hebraico Hebraicoetaric, *religionez Phariseu:

1. Cor. 11. 22.
Act. 23. 6.

6 Zeloz den becembatean Eliçaren persecutaçale: Leguean den iustitiaz den becembatean, estacuru gabe.

7 Baina irabacitan nadutzan gauçác, calteta co estimatu vkan ditut Christen amorecatic.

8 Bayeta segur gauça guciac calte diradela estimatzén dut Iesus Christ neure Iaunaren eçagutzearen excellentiagatic: ceinagatic gauça hauçaz gucioçaz neure buruä billuci vkan baitut, *eta* gorotz beçala eduquiten ditut, Christ irabaz deçadançát.

9 Eta eriden nadin hartan, ez neure iustitia

Legueaz dena dudalaric, baina Christen fedeaz dena, cein baita, Iaincoaganic fedez dē iustitiá:

10 Eta eçagut deçadançát, hura, eta haren resurrectionearen verthutea, eta haren afflictionén participationea, haren herioaren conforme eguin içanic:

11 Eya cerbait maneraz hel ahal naitenez hilen resurrectionera:

12 Ez ia ardietsi dudalacotz, edo ia perfect naicelacotz: baina banarreió, eya are ardiets ahal deçaquedanez, eta causa hunegatic ardietsi içā naiz Iesus Christez.

13 Anayeác, niçaz den becēbatean eztut neure buruäz estimatzen oraino ardietsi vkā dudala.

14 Baina gauçabat *eguiten dut* guibeletic diraden gauçác ahanzten ditudala, eta aitzinetic diraden gaucetara auançatzen naicela, chedeari narrayó, Iaincoaren garaitico vocationearen preçioari, Iesus Christ *Iaunean.*

15 Bada, perfect garen gucióc dugun sendimendu haour: eta baldin cerbait bercela senditzen baduçue, hura-ere Iaincoac reuelaturen drauçue.

*Rom.15.5. 1.Cor.1.10* 16 * Guciagatic-ere certara heldu içan baicara, *hartan* regla ber-batez ebil gaitecen, *eta* garen sendimendu ber-batetaco.

17 Anayeác, çareten gogo batez ene imitaçale, eta consideraitzaçue hala dabiltzanac, nola gu baiquaituçue exemplutan.

*Ro.16.17.* 18 * Ecen anhitz dirade dabiltzanac ceineçaz anhitzetan erran vkan baitrauçuet, eta orain-e-

te nigarrez nagoela erraiten, Christen crutzearen etsay *diradela*:

19 Ceinén fina *baita* perditionea, ceinén Iaincoa, sabela, eta gloriá hayén confusionerequin, pensatzen dutelaric lurreco gaucetan.

20 Baina gure conuersationea ceruëtan da: nondic Saluadorearen-ere beguira baicaude, cein baita Iesus Christ Iauna,

21 *Ceinec transformaturen baitu gure gorputz ezdeusa, haren gorputz gloriosoaren conforme eguin dadinçát, gauça guciac-ere bere suiet eguin ahal ditzaqueen verthuteaře araura.

*1.Cor.1.7. tit.2.12.*

## CAP. IIII.

*1 Perseueratzera exhortatzen. 5 Modestiá. 6 Othoitza eta esquer emaite. 7 Iaincoaře baquea. 8 Pensamendu sainduetan pensatzeco. 10 Paulen contentamendua. 18 Elemosynác sacrificio deitzen.*

1 HAlacotz, ene anaye maiteác, eta desiratuác *ene* bozcarioa eta coroá, hunela egon çaitezte *gure* Iaunean, *ene* maiteác.

2 Euodiari othoiztez nagoca, eta Syntycheri othoiztez nagoca diraden affectione ber-batetaco Iaunean.

3 Eta hiri-ere othoitz eguiten drauat, neure eguiazco lagunà, aiuta ditzan *emazte* enequin batean bataillatu diradenac Euangelioan, eta Clementequin eta ene berce aiutaçalequin, *ceinén icenac baitirade vicitzeco liburuän.

*Apoc.3.5. eta 20,12. eta 21.27.*

4 Aleguera çaitezte Iaunean bethiere: ber-

riz diot, aleguera çaitezte.
5 Çuen modestiá eçagut bedi guiçon guciéz: Iauna hurbil da.
6 Eztuçuela deusez ansiaric: baina gauça orotan othoitzaz eta supplicationez esquer emaitterequin çuē requestác notifica bequizquió Iaincoari.
7 Eta Iaincoaren baque adimendu gucia iragaiten duenac beguiraturen ditu çuē bihotzac eta çuen adimenduac Iesus Christean.
8 Gaineracoaz, anayeác, gauça eguiazco diraden guciac gauça honest guciac, iustoac, pûrac, amoriotacoac, icen onetacoac, baldin edocein verthute *bada* eta edocein laudorio, gauça hautan pensa eçaçue:
9 Cein ikassi-ere baitituçue, eta recebitu, eta ençun, eta ikussi-ere nitan. Gauça hauc *bada* eguin itzaçue, eta baquezco Iaincoa içanen da çuequin.
10 Alegueratu içan naiz Iaunean haguitz, ceren ia azquenecotz arrapherdatu çareten çuen niçazco ansián: hartan pensatzen-ere bacendutén, baina commoditateric etzindutén
11 Eznaiz minço deusen peitu içanez: ecen nic ikassi dut erideiten naicenaren araura content içaten.
12 Eta badaquit behera içaten, badaquit abundant içaten-ere: leku gucietan eta gauça gucietan ikassi dut asse içaten eta gosse içaten, eta abundant içaten eta peitu içaten.
13 Gauça guciac ahal ditzaquet Christ fortificatzen

ficatzen nauenaz:

14 Badaric-ere vngui eguin duçue ceren elkarrequin ene afflictionera communicatu vkan baituçue.

15 Eta çuec-ere badaquiçue, Philippianoác, ecen Euangelioaren *predicatione* hatsean, Macedoniaric partitu nincenean, eceinere Eliçac etzarautala deus cõmunicatu har eta emanezco beharquian, çuec ceuroc baicen.

16 Ecen Thessalonican ninceneań, behin eta berriz, behar nuena igorri vkan drautaçue.

17 Ez emaitzeren galdez nagoelacotz: baina galdeguiten dut fructua eçagut daquiçuen contura çuen abantailletan.

18 Bada recebitu vkan ditut gauça guciac, eta abundantia dut: complitu içã naicela, *diot*, Epaphroditeganic recebituric çueçaz *igorriac*, vrrin onetaco vssain-ança, Iaincoaren gogaraco *eta* placentiataco sacrificio.

19 Ene Iaincoac-ere suppliturén du behar vkanen duçuen gucia, bere abrastassunaren araura gloriarequin Iesus Christean.

20 Bada gure Iainco eta Aitari *dela* gloria secula seculacotz. Amen.

21 Salutaitzaçue saindu guciac Iesus Christeań Salutatzen çaituztez enequin diraden anayéc.

22 Salutatzen çaituztéz saindu guciéc, eta principalqui Cesaren etchecoéc.

23 Iesus Christ gure Iaunaren gratiá *dela* çuequin gucioquin. Amen.

*Philippianoetara Romaric scribatua Epaphroditerequin.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN COLOSSIANOETARATCO EPISTOLA.

## CAP. I.

*4 Colossianoén fedea. 7 Epaphras hayén ministre. 3, 9 Hecgatic Paulec othoitz eguiten eta esquerrac emaiten. 14 Bekatuén barkamendua. 15 Christ Iainco Aitaren imagina, Eliçaren buru. 20 Recóciliationea Christez. 24 Paul tribulationetan alegueratzen.*

1 PAVL Iaincoaren vorondatez Iesus Christen Apostoluac eta Timotheo *gure* anayeac,
2 Colossen diraden saindu eta anaye fideley Christeã: Gratia *dela* çuequin eta baquea gure Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ Iaunaganic.
3 Esquerrac emaiten drautzagu Iaincoari, *cein baita*, Iesus Christ gure Iaunaren Aita bethi çuengatic othoitz eguiten dugula,
4 Ençunic çuen fede Iesus Christ baithangoa eta saindu gucietara duçuen charitatea:
5 Ceruëtan çuey beguiratzen çaiçuen sperançagatic, cein Euangelioaren eguiazco hitzaz lehen ençun vkan baituçue,

6 *Cein heldu içan baita çuetara, mundu orotara-ere beçala, eta fructificatzen baitu, çuec baithan-ere beçala, Iaincoaren gratiá eguiazqui ençun eta eçagutu vkan duçuē egunaz gueroztic.

* cein Euangelio.

7 Nola ikaſſi-ere baituçue Epaphras gure lagun maite eta cerbitzari-quideaganic, cein baita Chriſten miniſtre fidel çuendaco:

8 Ceinec declaratu-ere baitraucu çuen Spirituazco charitatea.

9 Halacotz gu-ere *haur* ençun vkan guenduen egunaz gueroztic, ezgara baratzen çuengatic othoitz eguitetic eta galdeguitetic betha çaitezten haren vorondatearen eçagutzeaz, ſapiētia eta adimendu ſpiritual gucirequin:

10 *Iaunari dagocan beçala ebil çaitezten-çát, gauça gucietan haren gogaraco çaretēçát, *obra on orotan fructificatzen duçuela, eta aitzinaratzen çaretala Iaincoaren eçagutzean.

Eph.4.1. philip 1.27 1.theſ.2.12 1.Cor.1.5.

11 Indar orotan fortificaturic, haren gloriaren verthutearen arauez, ſuffrimendu eta ſpirituzco patientia orotara bozcariorequin:

12 Eſquerrac emaiten drautzaçuela Aitari, ceinec ſufficient eguin baiquaitu ſainduén heretagean participant içateco arguian:

13 *Ceinec deliuratu baiquaitu ilhumbearen botheretic eta eraman bere Seme maitearen reſumara.

Mat.3.17. eta 17.5. 2.pier.1.17

14 Ceinetan baitugu redemptionea haren odolaz, baita, bekatuén barkamendua.

Heb.1.3. 15 *Cein baita Iainco inuiſiblearen imaginá, gauça creatu guciac *baino* lehen iayoa.

Ioan.1.3. 16 *Ecen hartan creatu içan dirade ceruëtan eta lurrean diraden gauça guciac, viſibleac eta inuiſibleac, nahiz-biz Thronoac, nahiz Dominationeac, nahiz Principaltaſſunac, nahiz Puiſſançác, gauça guciac, *diot*, harçaz eta harengatic, creatu içan dirade.

17 Eta bera gauça guciac baino lehen da, eta gauça guciac harçaz conſiſtitzen dirade.

18 Eta hura da Eliça gorputzaren buruä, *eta* hatſea, * eta hiletarico lehen iayoa: gauça gucietan lehen lekua eduqui deçançát.

1.Cor.15. 21. apoc.1.5. Ioan.1.14. berriz.2.9.

19 *Ecen *Aitáren* placer ona içan da complimendu gucia hartan habita ledin:

20 Eta harçaz reconcilia litzan gauça guciac beregana, pacificaturic haren crutzeco odolaz hambat ceruän nola lurrean diraden gauçác.

21 Eta çuec noizpait harenganic vrrunduac eta etſay cinetelaric, penſamenduz obra gaichtotan:

22 Badaric-ere orain reconciliatu çaituzte bere haraguiaren gorputzean, herioaz: çuec eguin cintzatēçát ſaindu, eta atchaquio gabe eta irreprehenſible bere aitzinean:

23 Bay baldin egoiten baçarete fedean fundatuac eta fermu, eta erautzen ezpaçarete ençun vkan duçuen Euangelioco ſperançatic, cein *Euangelio* ceruären azpico creatura ororen arteã predicatu içan baita, ceinetaco miniſtre ni Paul eguin içan bainaiz:

24 Orain alegueratzen naiz çuengatic ſuffritzen ditudan gaucéz, eta Chriſten afflictionén gaineracoac complitzen ditut neure haraguiá, haren gorputzagatic, cein baita Eliçá.

25 Ceinetaco miniſtre eguin içan bainaiz, Iaincoaren diſpenſationez, cein eman içan baitzait çuec baithara, Iaincoaren hitzaren complitzeco:

26 *Cein baita*, * ſecula eta adin guciéz guerozti eſtaliric egon içan den myſterioa, baina orain manifeſtatu içan çaye haren ſainduey.

Ro.16.25. eph.3.9. 2.tim.1.9. tit.1.2. 1.pier.1.20

27 Ceiney Iaincoac eçagut eraci nahi vkan baitraue, ceric den myſterio hunetaco gloriaren abraſtaſſuna Gentilén artean, cein baita Chriſt çuetan, * gloriazco ſperançá:

1.tim.1.1.

28 Cein guc predicatzen baitugu, admoneſtatzen dugularic guiçon gucia, eta iracaſten dugularic guiçon gucia ſapientia orotan: guiçon gucia perfect eguin deçagunçát Ieſus Chriſt *Iaunean*.

29 Hartacotzat trabaillatzen-ere naiz, combatitzen naicela haren operatione nitan bothetſuqui obratzen duenaren araura.

CAP. II.

*2 Paulec fidelez duen arthá. 3. Sapientiazco theſaurac Chriſt baithan. 8 Guiçonén doctrinatic beguiratzera exhortatzen. 11 Circonciditu Chriſtez. 12 Obortzi, reſuſcitatu, viuificatu eta deliuratu Chriſtez. 16 Ordenança humanoetan ez fundatzeco.*

1 ECen nahi dut daquì-çuen cein bataìlla handia dudan çuengatic eta Laodiceacoacgatic, eta haraguian ene presentiá ikussi eztuté guciacgatic:

2 Consola ditecençát hayén bihotzac, elkarrequin charitatez iunctaturic, eta adimendu guerthuqui seguratuaren abrastassun gucian, *gure* Iainco eta Aitaren eta Christen mysterioaren eçagutzetan.

3 Ceinetan sapientiazco eta scientiazco thesaur guciac gordeac baitirade.

4 Eta haur erraiten dut nehorc goga eraciteco hitzez engana etzaitzatençát.

1.Cor. 5.3. 5 *Ecen gorputzez absent banaiz-ere, spirituz ordea çuequin naiz, alegueratzen naicelaric eta ikusten dudalaric çuen reguelá, eta Christ baithan duçuen fedearen fermutassuna.

6 Beraz Iesus Christ Iauna recebitu vkan duçuen beçala, hartan ebil çaitezte:

7 Erro eguinac eta edificatuac çaretelaric hartan, eta fedean confirmatuac, iracatsi içan çareten beçala, abundos çaretelaric * hartan remerciamendurequin.

*hartan, fedean.

8 Beguirauçue nehorc pilla etzaitzaten philosophiaz eta enganio vanoz, guiçonén ordenancén araura, munduco rudimenten araura, eta ez Christen araura:

Ioan.1.14. 9 *Ecen hartan habitatzen da diuinitatezco

bethetaſſun gucia corporalqui.

10 Eta çarete hartan complituac, cein baita Principaltaſſun eta Bothere guciaren buruã.

11 Ceinetan circonciditu-ere içan baitzarete, *eſcuric gabe eguiten den circonciſionez, haraguico bekatuén gorputzaz billuciric, Chriſten circonciſioneaz:

Rom.2.29.

12 * Harequin ohortze içanic Baptiſmoaz, *ceinez harequin bateã reſuſcitatu-ere baitzarete, Iaincoarẽ fede botheretſuqui operatzẽ duenaz, ceinec hura hiletaric reſuſcitatu vkã baitu.

Rom.6.4.

*ceinez, baptiſmoaz,

13 * Eta çuec hilac cinetelaric bekatuetan eta çuen haraguiaren preputioan, harequin batean viuificatu vkan çaituzté, çuey bekatu guciac barkaturic,

Eph.2.1.

14 *Eta** iraunguiric ordenancetan gure contra *cen* obligançá, cein baitzén gure contrario, baina *harc* kendu vkan du hura artetic, crutzeari eratchequiric:

Eph.2.15.

15 *Eta* billuciric Principaltaſſunac, eta Bothereac monſtrãçatan eraman vkan ditu publicoquí heçaz *hartan triumphaturic.

*hartan, crutzean.

16 Nehorc bada etzaitzatela condẽna ianean, edo edanean, edo beſta egunaren, edo ilhargui berriaren, edo Sabbathoén reſpectuz:

17 Cein baitirade ethorteco ciraden gaucén itzal, baina gorputz a Chriſtena *da*.

18 Nehorc ezteçala çuen gainean ſeignoria bere placerera humilitatez, eta Aingueruën cerbitzuz, ikuſſi eztituen gaucetara *bere* buruä auançatuz, bere haraguiaren adimenduz erhoqui hanturic:

19 Eta eztatchecalaric buruäri, ceinetaric gorputz gucia iunćturaz eta lothuraz fornituric eta elkarrequin iunćtaturic Iainçoaren hacitzez hatzen baita.

20 Bada baldin hil baçarete Chriſtequin munduco rudimentez den becembatean, cergatic nehorc ordenançaz cargatzen çaituzte, munduan vici bacinete beçala?

21 *Hala nola*, Ezteçála ian, Ezteçála daſta, Ezteçála hunqui.

22 Guiçonen manamenduén eta doćtrinén arauezco gauça hauc gucioc vſança berez galdu doaça.

23 Badaric-ere gauça hauc badute cerbait ſapientia irudi bere vorondatezco deuotionean, eta ſpirituzco humilitatean, eta gorputza guppida eztuten becembatean: eztirade *ordea* eceinere preciotaco, *ceren* haraguia reſſaſiatzen duten gaucetara *beha baitaude.*

## CAP. III.

*1 Chriſt garayan bilhatzeco. 5 Bekatutaco membroac mortificatzeco. 8 Hirá. Gaitzerraitea. Gueçurra. 9 Guiçon çaharra eta berria. 12 Charitatea eta baquea. 18 Inſtrućtione emaztén, ſenharrén, haourrén, aitén eta cerbitzarién.*

1 BAda baldin reſuſcitatu içan baçarete Chriſtequin, garayan diraden gauçác bilhaitzaçue, non baita Chriſt Iainçoaren eſcuinean iarria.

2 Garaico gaucetan pensa eçaçue, ez lurraren gainecoetan.
3 Ecen hil içan çarete, eta çuen vicitzea gordea da Christequin Iaincoa baithan.
4 Baina Christ aguer dadinean *cein baita* gure vicia, orduã çuec-ere aguerturẽ çarete gloriatã.
5 *Mortificaitzaçue bada çuen membro lurraren gainecoac, paillardiçá, cithalqueriá, appetitu desordenatua, guthicia gaichtoa, eta auaritiá, cein baita idolatria.
6 Gauça haucgatic ethorten da Iaincoaren hirá desobedientiazco haourrén gainera.
7 Ceinetã çuec-ere ebili içan baitzarete noizpait, hetan vici cinetenean.
8 *Baina orain ken itzaçue çuec-ere hec guciac, hira, colera, malitia, gaitzerraitea, minçatze deshonesta çuen ahotic appart.
9 Gueçurric ezterraçuela batac bercearẽ contra, eraũciric guiçon çaharra bere eguitatequin,
10 Eta iaunciric berria, cein arramberritzen baita eçagutzez, hura creatu duenaren imaginaren araura.
11 Non ezpaita Grecquic ez Iuduric, Circoncisioneric ez Preputioric, Barbaroric ez Scytheric, sclaboric ez libreric: baina gucia eta gucietan Christ.
12 Vezti çaitezte bada Iaincoarẽ elegitu, saindu eta maite anço, misericordiazco halsarrez, benignitatez, humilitatez, emetassunez, spiritu patientez;
13 Supportatzen duçuelaric batac bercea, eta

*Ephes.5.3.*

*Rom.6.4. ephes 4.23. 1.pier.2.1 eta.4.1.*

barkatzen draucaçuelaric elkarri, baldin cembeitec berceren contra kereillaric badu: nola Christec-ere barkatu vkan baitrauçue, hala çuec-ere.

14 Eta hauen gución gainera *vezti çaitezte* charitatez, cein baita perfectionezco lotgarria.

15 Eta Iaincoaren baqueac regna beça çuen bihotzetan, ceinetara deithuac-ere baitzarete gorputz batetan, eta çareten gratioso.

16 Christen hitza habita bedi çuetan largoqui sapientia gucirequin: iracasten eta admonestatzen duçuela elkar psalmuz, laudorioz, eta cantu spiritualez remerciamendurequin, cantatzen draucaçuela çuen bihotzean Iaunari.

1.Cor.10.31.

17 *Eta cerere eguin baiteçaçue hitzez edo obraz, Iesus Iaunaren icenean *eguiçue*, esquerrac emaiten drautzaçuela *gure* Iainco eta Aitari harçaz.

Ephe.5.22. 1.pier.3.1.

18 *Emazteác, çareten suiet çuen senharretara, bide den beçala *gure* Iaunean.

1.Cor.7.3. 1.pier.3.7.

19 *Senharrác, on erizteçue çuen emaztey, eta etzaiteztela samint hayén contra.

Ephes.6.1.

20 *Haourrác, obeditzaçue aitác eta amác gauça gucietan: ecen haur Iaunari placent çayó.

21 Aitác, eztitzaçuela tharrita çuen haourrac: gogoa gal ezteçatençát.

Ephes.6.5. tit.2.9. 1.pier.2.18

22 *Cerbitzariác, obeditzaçue gauça gucietan çuen nabussi carnalac, ez beguiaren araura cerbitzatzé dituçuela, guiçonén gogara eguin nahi bacindute beçala, baina bihotzeco simplicitaterequin, Iaunaren beldur çaretelaric.

23 Eta cerere baitaguiçue, gogotic eguiçue Iaunari anço eta ez guiçoney *anço.*

24 Daquiçuelaric ecen Iaunaganic recebituren duçuela heretageco alocairuä, ecen Christ Iauna cerbitzatzen duçue.

25 Baina iniustoqui eguiten duenac, recebituren du iniustoqui eguin duqueena: eta *ezta persónen acceptioneric.

Act.10.34 rom.2.11. ephes.6.9. 1 pier.1.17

CAP. IIII.

1 *Nabussién eguimbidea.* 2 *Orationetan perseueratzeco.* 6 *Christinoén minçatzea nolaco içateco.* 7 *Thychique.* 9 *Onesimo.* 10 *Aristarque.* 11 *Iesus Iusto deitzen dena.* 12 *Epaphras.* 14. *Luc medicua.* 17 *Archippe.*

1 NAbussiác, eguieçue çucena eta eguïbidea cerbitzariey, daquiçuelaric ecẽ çuec-ere baduçuela Iaun-bat ceruëtã.

2 *Orationetan perseuera eçaçue, hartan veillatzen duçuelaric remerciamendurequin.

Luc 18 1. 1.thes.5.17

3 *Othoitz eguiten duçuelaric elkarrequin guregatic-ere hitzaren borthá Iaincoac irequi dieçagunçát, Christen mysterioaren denuntiatzeco, ceinagatic presoner-ere bainaiz.

Ephes.6.18 2.thess.3.1.

4 Hura manifesta deçadançát, minçatu behar dudan beçala.

5 *Çuhurqui ebil çaitezte campocoetara, demborá recrubatzen duçuelaric.

Ephe.5.15.

6 Çuen hitza bethiere *biz* gatzez confitua

gratiarequin, barbederari nola ihardetsi behar draucaçuen daquiçuençát.

7 Ene equiteco guciac notificaturen drauzquiçue Tychique *gure* anaye maiteac, eta ministre fidelac, eta *gure* Iaunean ene cerbitzari quideac:

8 Cein igorri vkan baitut çuetara berariaz, e-çagut ditzançát çuen eguitecoac, eta consola ditzançát çuen bihotzac,

9 Onesimo *gure* anaye fidelarequin eta maitearequin cein baita çuenetaric, *hec* alde hunetaco eguiteco guciéz auertituren çaituztéz.

10 Salutatzen çaituztéz Aristarque ene presoner quideac, eta Marc Barnabasen lehen gussuac (ceinez manamendu recebitu baituçue, baldin çuetara ethor badadi, recebi deçaçuen)

11 Eta Iesus Iusto deitzen denac, cein baitirade circoncisionetic, hauc solament *ditut* aiutaçale Iaincoaren resumán, eta ene solageamendutaco içan dirade.

12 Salutatzē çaituzte Epaphras çuenac, Christen cerbitzariac, bethiere bataillatzen delaric çuengatic othoitzetan, çaudetençát perfecto eta complitu Iaincoaren vorondate gucian:

13 Ecen haur harçaz testificatzen dut, ecen zelo handia duela çuengatic eta Laodicean, eta Hyerapolen diradenacgatic.

2.Tim 4. 11.

14 *Salutatzen çaituztez Luc medicu maiteac, eta Demasec.

15 Salutaitzaçue Laodicean diraden anayeac, eta Nympha, eta haren etchean den Eliçá.

16 Eta epistola haur çuec baithan iracurri da-

tenean, eguiçue Laodiceacoén Eliçan-ere iracur dadin: eta Laodiceatic *scribatua*, çuec-ere iracur deçaçuen.
17 Eta erroçue Archipperi, Gogoa eçac *gure* Iaunean recebitu vkan duàn administrationea compli deçánçat.
18 Salutationea, ene Paulen escuz. Çareten orhoit ene estecaduréz. Gratia *dela* çuequin. Amen.

*Romaric Colossianoey scribatua Tychiquerequin eta Onesimorequin.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN THESSALONICEANOETARATCO

## EPIST. LEHENA.

### CAP. I.

*2 Esquer emaite eta othoitzá. 4 Thessaloniceanoén electionea. 5 Paulec haey efficaciorequin hitza predicatu, 6 Hayéc hura tribulationerequin recebitu. 7 Hayén fedea eta conuersationea.*

1 PAVLEC eta Siluanoc eta Timotheoc Thessaloniceanoén Eliça, Iainco Aitán eta Iesus Christ *gure* Iaunean *denari*, Gratia *dela* çuequin eta baquea gure Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ Iaunaganic.

2 Eſquerrac emaiten drautzagu Iaincoari bethiere çueçaz gucióz, memorio çueçaz eguiten dugula gure othoitzetan:

3 Pauſſu gabe orhoitzen garelaric çuen fedearen verthuteaz, eta *çuen* charitatearẽ trabailluaz, eta *çuen* ſperãçaren patientiáz Ieſus Chriſt gure Iaunean, gure Iainco eta Aitaren aitzinean:

4 Daquigularic, anaye maiteác, çuec Iaincoaz elegituac *çaretela*:

5 Ecen gure Euãgelioa conſiſtitu içan da çuec baithan ez hitzean ſolament, baina verthutean-ere, eta Spiritu ſainduan, eta ſegurança hãditan, daquiçuen beçala nolaco içan garẽ çuen artean çuengatic.

6 Çuec-ere gure imitaçale eguin içan çarete eta Iaunaren, recebituric hitza anhitz tribulationerequin, Spiritu ſainduaren bozcariorequin:

7 Hala non Macedonian eta Achaian ſinheſten duten gucién exemplu içan baitzarete.

8 Ecen çuetaric ſoinu eguin vkan du Iaincoaren hitzac, ez ſolamẽt Macedonian eta Achaian, baina leku orotan-ere çuen fede Iaincoa baithangoa diuulgatu içan da, hala non ezpaitugu mengoa deus erran deçagun:

9 Ecen beréc guçaz contatzen duté cer ſartzea vkan dugun çuetara, eta nola cõuertitu içan çareten Iaincoagana idoletaric, cerbitza cineçatençát Iainco vicia eta eguiazcoa:

10 Eta haren Seme Ieſuſen beguira cinaudetençát ceruẽtaric, cein reſuſcitatu vkan baitu hiletaric, *cein baita*, gu ethorteco den hiratic deliuratzen gaituena.

CAP. II.

*1 Paulen Thessaloniceanoetaratco sartzea. 2, 10 Haren puritatea ministerioan. 9 Predicatu languiten ari cela. 14 Persecutione. 15 Iuduac persecutaçale.*

1 ECen ceuroc badaquiçue, anayeác, gure çuec baitharaco sartzea nola eztén vano içan:

2* Baina are, daquiçuen beçala, lehenetic affligitu eta iniuriatu içan baguinen-ere Philippesen, hardieça hartu vkan dugu gure Iaincoan, çuey Iaincoarē Euangelioaren predicatzera combat handirequin. *Act. 16.22*

3 Ecen gure exhortationea ezta abusionez, ez vileniaz, ez enganiorequin içan:

4 Baina nola Iaincoaz approbatu içan baicara Euangelioaren predicationea eman lequigun, hala minçatzen gara, ez guiçonén gogara eguin nahi baguendu beçala, baina Iaincoaren, ceinec gure bihotzac approbatzen baititu.

5 Ecen behinere lausenguzco hitzez eztugu vsatu vkan, daquiçuen beçala: ezeta auaritiataco occasionez: Iaincoa *da* testimonio.

6 Eta guiçonetaric eztugu gloriaric bilhatu vkan, ezeta çuetaric, ez bercetaric, grauitate eduqui ahal guenduqueelaric, Christen Apostolu beçala.

7 Baina içan gara eme çuen artean, vnhide batec bere haourrac delicatuqui hatzen balitu beçala.

8 Hunela çuetara affectionatuac guinelaric, desir guenduen çuey partitzera ez solament Iain-

coaren Euangelioa, baina gure arima propriac-ere, ceren guçaz onhetsiac baitzineten.

Act.20.34 1.cor.4.12. 2.thess.3.8. 9 Ecē orhoit çarete, anayeác, *gure trabailluaz eta nequeaz: ecen gau eta egun lāguiten ari guinela, çuetaric nehoren phorogu ezguinençát, predicatu vkan dugu çuec baithan Iaincoaren Euangelioa.

10 Çuec testimonio *çarete* eta Iaincoa, nola sainduqui eta iustoqui, eta reprotchu gabe çuen, sinhetsi duçuenón artean cōuersatu vkā dugun.

11 Daquiçuen beçala, nola çuetaric batbedera, aitác bere haourrac beçala, auertitzen guēduen.

Ephes.4.1. philip.1.27 coloss.1.10. 12 Eta consolatzen eta requeritzen, *ebil cindeizten bere resumara eta gloriara deitzen çaituzten Iaincoari dagocan beçala.

13 Halacotz guc-ere esquerrac emaitē drauzquiogu Iaincoari paussuric gabe, ceren Iaincoaren hitzaren predicationea gureganic recebitu vkan duçuenean, recebitu vkā baituçue, ez guiçonén hitz beçala, baina (nola eguiazqui baita) Iaincoarē hitz beçala, ceinec obratzen-ere baitu çuetan sinhesten duçuenotan.

14 Ecen çuec, anayeác, imitaçale eguin içan çarete Iaincoaren Eliça Iudean diradenén Iesus Christean, nola gauça berac suffritu vkan baituçue çuec-ere çuen natione berecoetaric, hec-ere Iuduetaric beçala:

15 Ceinéc Iesus Iauna-ere hil vkan baitutè, eta berén Propheta propriac, gu-ere persecutatu vkan gaituztè, eta eztirade Iaincoaren gogaraco, eta guiçon gucién contrario dirade:

16 Gu

16 Gu empatchatzen gaituztelaric Gentiley minçatzetic salua ditecençat, bethi compli ditzatençát bere bekatuac: ecen hetara heldu içan da hirá fineraño.

17 Eta gu, anayeác, çuetaric separaturic dembora appurbatetacotz ikuftez, ez bihotzez, *hambat cineçago emplegatu içan gara çuen beguithartearen ikuftera, defir handirequin.

*Rom.1.11. eta 15.23.*

18 Halacotz ethorri nahi içan gara çuetara (ni Paul behinçát) behin eta berriz, baina empatchatu vkan gaitu Satanec.

19 Ecen ceric da gure sperãçá, edo bozcarioa, edo gloriagarrico coroa? ala ez çuec-ere Iesus Christ gure Iaunaren aitzinean haren aduenimenduan?

20 Segur çuec çarete gure gloriá eta bozcarioa.

## CAP. III.

*1 Paul Athenesen. 3 Nola afflictione suffritzeco ordenatuac garen. 6 Thessaloniceanoén fedea. 12 Charitatean abundos diraden Paulec desiratzen.*

1 HAlacotz guehiagoric ecin pairatuz, on irudi içan çaicu gueuroc Athenesen gueldi guentecen.

2* Eta igorri vkan dugu Timotheo gure anaye eta Iaincoaren ministrea eta Christen Euangelioan gure aiutaçalea, çuen confirmatzera eta exhortatzera çuen fedearen gainean:

*Act.16.1.*

3 Nehor trubla eztadinçát afflictione hautan: ecen ceuroc badaquiçue hartaco ordenatuac garela.

4 Ecen çuec baithan guinenean aitzinetic erraiten guendrauçuen ecen afflictione iragã behar vkanen guenduela, heldu-ere içan den beçala, eta badaquiçue.

5 Halacotz nic-ere guehiagoric ecin pairatuz, *hura* igorri vkan dut çuen fedea eçagut neçançát, tentaçaleac nolazpeit tentatu centuqueztẽ beldurrez, eta ezdeuſtu ezlicén gure trabaillua.

6 Eta heuraguiric eztuela ethorri cenean Timotheo çuetaric guregana, eta declaratu cerauzquigunean çuen fedea eta charitatea, eta nola duçuen guçaz memorio ona bethiere, deſiratzen gaituçuelaric ikuſtera, guc-ere çuec beçala:

7 Halacotz içan gara cõſolatu, anayeác, çuetan, gure afflictione eta tribulatione orotan, çuen fedeaz.

8 Ecen orain gara vici, baldin çuec fermu baçaudete Iaunean.

9 Ecen cer remerciamendu Iaincoari renda ahal deçaqueogu çueçaz, gure Iaincoaren aitzinean çuen cauſaz aleguer atzen garen alegrança guciagatic?

Rom. 1.10. eta 15.23.

10 *Gau eta egun abundantquiago othoitz eguiten dugula ikus deçagunçát çuen beguithartea, eta compli deçagunçát çuen fedean peitu dena.

11 Bada, gure Iainco eta Aitac, eta Ieſus Chriſt

gure Iaunac chuchent deçala gure çuetaratco bidea.

12 Eta çuec Iaunac multiplica eta abunda eraci çaitzatela elkarganaco eta gucietaraco charitatean, gu-ere çuetara beçala:

13 *Confirma ditzançát çuen bihotzac reprotchu gabe saindutassunean gure Iainco eta Aitaren aitzinean, Iesus Christ gure Iaunaren bere saindu guçiequilaco aduenimenduco.

2.Cor.1.8. berriz 5.23

## CAP. IIII.

*1 Perseueratzera exhortatzen. 3 Paillardiçari ihes eguiteco. 5 Gentilén guthiciá. 6 Iaincoa mendequiós. 8 Ministreac ez menosbreciatzeco. 9 Thessaloniceanoen charitatea. 12 Conuersatione honesta. 13, 17 Resurrectionea. 17 Christen azquen aduenimendua.*

1 GAineracoaz bada anayeác, othoizten çaituztegu, eta requeritzen Iesus Iaunaz, gureganic recebitu vkan duçuen beçala, nola ebili behar çareten eta Iaincoaren gogaraco içan, guerotic guerora auançago çaitezten.

2 Ecen badaquiçue cer manamenduac eman drauzquiçuegun Iesus Iaunaren partez.

3 *Ecen haur da Iaincoarē vorōdatea, çuen sanctificationea, paillardiçataric beguira çaitezten:

Rom.12.2. ephes.5.17

4 *Eta* iaquin deçan çuetaric batbederac bere vnciaren posseditzen sanctificationerequin eta ohorerequin:

5 Ez guthiçiataco affectionerequin, Gentil Iaincoa eçagutzen eztutenen ançora.

1.Cor.6.8. 6 *Nehorc ezteçala aurizqui edo engana bere anayea eçeinere eguitecotan: ecen Iauna gauça hauen gucién mendecaçale da, nola lehen-ere erran eta teſtificatu baitrauçuegu.

2.Cor.1.2. 7 *Ecen ezgaitu deithu vkan Iaincoac cithalqueriatara, baina ſanctificationetara.

8 Bada *gauça hauc* arbuyatzen dituenac, eztu
1.Cor.7.40 guiçon-bat arbuyatzen, baina Iaincoa, *ceinec bere Spiritu ſaindua gutã eçarri-ere vkan baitu.

9 Anayetaſſunezco charitateaz den becembatean, eztuçue mengoaric ſcriba dieçaçuedan:
Ioan 13.34 eta 15.12. 1.ioan 4.21 *ecen ceuroc Iaincoaz iracatſiac çarete, elkar onhets deçaçuen.

10 Ecen eguiten-ere baduçue haur Macedonia gucian diraden anaye orotará: baina othoizten çaituztegu, anayeác, guerotic guerora auançago çaiteztén,

2.The.3.7. 11 *Eta pena eçar deçaçuen baquez içatera, eta çuen eguiteco proprién eguitera, eta çuen eſçu propriéz languitera, manatu çaituztegun beçala:

12 Campotic diradenetara honeſtqui perporta çaiteztençát, eta deuſen beharric eztuçuençát.

13 Eta eztut nahi çuec ignorãt çaretẽ, anayeác, lo dauançanéz den becembatean, cõtriſta etzaiteztençát, berce goitico ſperançaric eztutenacere beçala.

14 Ecen baldin ſinheſten badugu Ieſus hil eta reſuſcitatu dela, halaber Ieſus *Iaunean* lo daun-

çanac-ere Iaincoac erekarriren ditu harequin.

15 Ecen haur erraiten drauçuegu Iaunaren hitzez ecē gu viciric goitico garatenoc Iaunaren aduenimenduan ezgaitzaiztela aitzinduren lo dauncateney.

16 *Ecen Iauna bera exhortationezco oihurequin, eta Archangelu vozequin, eta Iaincoaren trompettarequin iautsiren da cerutic: eta Christean hilac resuscitaturen dirade lehenic:

*Matth.24. 31. 1.cor.15. 51.*

17 Guero gu viciric goitico garatenoc, harrapaturen garate hequin batean hodeyetan Iaunaren aitzinera airetan: eta halaz bethi Iaunarequin içanen gara.

18 Bada, consola eçaçue elkar hitz hauçaz.

## CAP. V.

*2 Christen aduenimenduaz. 4 Arguico eta ilhumbeco haourréz. 6 Veillatzeco eta sobre içateco. 8 Fidelen harmác. 10 Christequin vicitzeco. 11 Elkar exhortatzeco. 14 Obra charitatezcoac. 19 Spirituaren dohainac ez iraunguiteco. 21 Gauça guciac experimentatzeco, on dena eduquiteco.*

1 DEmboréz eta momentéz den becembatean, anayeác, ezta mēgoaric scriba dieçaçuedā.

2 Ecen ceuroc badaquiçue vngui ecen *Iaunaren eguna ethorriren dela, ohoina gauaz beçala.

*Matth.24. 44. 2 pier 3.10 apoc.3.3. eta 16.15.*

3 Ecen erran deçatenean, Baque eta segurança: orduan gainera ethorrirē çaye vstegaberico destructionea, içorra denari erdi mina beçala, eta

eztirade itzuriren.

4 Baina çuec, anayeác, etzarete ilhũbean, non egun harc, ohoinac *eguiten duen* beçala, ardiets çaitzaten.

5 Çuec gucioc arguiaren haour çarete, eta egunaren haour: ezgara gauaren edo ilhumbearen *haour*.

6 Ezgaunçala bada lo berceac beçala, baina gauden iratzarri eta garén ſobre.

7 Ecen lo daunçanac, gauaz lo daunça: eta horditzen diradenac, gauaz dirade hordi.

Eſa.59.17. ephe.6.17. 8 Baina gu egunaren garenoc, garén ſobre, *fedezco eta charitatezco halacretaz veztituac, eta caſquet orde, ſaluamendutaco ſperançáz.

9 Ecen ezgaitu ordenatu Iaincoac hiracotzát, baina ſaluamẽduaren vkaitecotzát Ieſus Chriſt gure Iaunaz,

10 Cein guregatic hil içan baita: bagaude iratzarriric, ala bagaunça lo, harequin batean vici garén.

11 Harren, exhorta eçaçue elkar, eta edifica eçaçue batac bercea, eguiten-ere duçuen beçala.

12 Halaber othoizten çaituztegu, anayeác, eçagut ditzaçuen çuen artean trabaillatzen diradenac, eta çuẽ gaineco diradenac *gure* Iaunean, eta çuen admoneſtaçaleac:

13 Eta amorio handitan eduqui ditzaçuen, eguiten dutén obragatic. Auçue baque elkarren artean.

14 Halaber othoitz eguitẽ drauçuegu, anayeác, admoneſta ditzaçuẽ vicitze deſordenatutacoac,

consola ditzaçuen gogo chipitacoac, sustēga ditzaçuen flaccuac, çareten spirituz patient gucietara.

15 *Beguirauçue nehorc eztieçón gaitza gaitzagatic nehori renda: baina vnguiari bethi çarreitzate, bata berçeagana eta gucietara.

*Pro.17.13. eta 20 20. matt.5.39. rom.12.17 1.pier. 3.9.*

16 Bethiere çareten aleguera.

17 *Paussu gabe othoitz eguiçue.

*Eccl.18.22 luc 18.1.*

18 Gauça gucietan esquerrac emainzquiçue: ecen haur da Iaincoaren çuetaraco vorondatea Iesus Christez.

19 Spiritua ezteçaçuela iraungui:

20 Prophetiác eztiçaçuela menosprecia.

21 Gauça guciac experimentaitzaçue: on denari çatchetzate:

22 Gaizquiarē irudi orotaric beguira çaitezte.

23 Bada Iainco baquezcoac ossoqui sanctifica çaitzatela: eta çuen spiritu gucia eta arima eta gorputza hoguen gabe, Iesus Christ gure Iaunaren aduenimenduco beguira ditecela.

24 *Fidel da çuec deithu çaituztena, eguinen ere badu.

*1.Cor.1.8.*

25 Anayeác, othoitz eguiçue guregatic.

26 Salutaitzaçue anaye guciac pot saïdurequin.

27 Requeritzen çaituztet Iaunaren partez iracur daquién epistola haur anaye saindu guciey.

28 Iesus Christ gure Iaunaren gratia *dela* çuequin. Amen.

*Thessaloniceanoetaratco lehena Athenestic scribatu.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN THESSALONICEANOETARATCO EPISTOLA BICARRENA.

## CAP. I.

*3 Theſſaloniceanoén fedea eta charitatea. 5 Paulec hec conſolatzen. 8 Iauna infidelez mendecaturen. 11 Theſſaloniceanoacgatic Paulec othoitz eguiten.*

1 PAVLEC eta Siluanoc eta Timotheoc gure Iainco Aitã eta Ieſus Chriſt *gure* Iaunean Theſſaloniceanoẽ *dẽ* Eliçari:
2 Gratia *dela* çuequin eta baquea gure Iainco Aitaganic eta Ieſus Chriſt Iaunaganic.

1.Theſſ.1.2 3 *Eſquerrac eman behar drauzquiogu Iaincoari bethiere çuengatic, anayeác, raçoina den beçala, ceren haguitz handitzen den çuen fedea eta *ceren* abundatzen den çuen guciotaric batbederaren elkarganaco charitatea:
4 Hala non gueuror çuengatic gloriatzen baicara Iaincoaren Elicetan, çuen perſecutione eta iragaiten dituçuen afflictione gucietaco patientiáz eta fedeaz:

5 *Cein baitirade Iaincoarẽ iugemendu iustoaren seignale, Iaincoaren resumaren digne eguin çaiteztençát, ceinagatic suffritzẽ-ere baituçue: *Iud 6.*
6 Ecen gauça iustoa da Iaincoa baithan, çuec affligitzen çaituzteney, afflictione renda diecén
7 Eta çuey affligitzen çaretenoy solageamendu gurequin, * aguer dadinean Iesus Iauna cerutic bere puissanciaco Ainguerüequin, *1.Thes.4.16.*
8 Suzco garrequin, mendecatzen delaric Iaincoa eçagutzen eztutenéz, eta Iesus Christ gure Iaunaren Euangelioari behatzẽ etzaizquionéz:
9 Cein punituren baitirade punitione eternalez, *condemnaturic* Iaunaren presentiáz eta haren botherearen gloriáz:
10 Dathorrenean glorificatu dençát bere sainduetan, eta miragarri eguin dadinçat sinhesten duten gucietan (ceren gure çuec baitharaco testimoniagea sinhetsi içan baita) egun hartan:
11 Causa hunegatic-ere othoitz eguiten dugu bethiere çuengatic, çuec vocationearen digne gure Iaincoac eguin çaitzatençat, eta cõpli decan *bere* ontassunarẽ placer on gucia, eta fedearen obrá botheretsuqui:
12 Glorifica dadinçát Iesus Christ gure Iaunaren icena çuetan, eta çuec hartan, gure Iaincoaren eta Iesus Christ Iaunaren gratiaren araura.

CAP. II.

2 *Perseueratzeco fedean.* 4 *Christen aduenimenduaren signoac.* 5 *Antechristen descriptionea.* 10 *Incredulén cõdemnationea.* 13 *Thessaloniceanoac saluamendutara elegitu.*

1 OThoitz eguiten drauçuegu bada, anayeác, Iesus Christ gure Iaunaren aduenimenduaz eta gure harenganaco biltzarreaz.

2 Etzaitezten bertan adimenduz erauz, eta etzaitezten trubla ez spirituz, ez hitzez, ez epistolaz, guçaz *scribatua* baliz beçala, Christen eguna bertan baliz beçala.

3 Nehorc etzaitzatela seduci eceinere maneraz: ecen *egun hura ezta ethorriren* non reuoltamēdua lehen ethor eztadin, eta manifesta eztadin bekatutaco guiçona, perditionezco semea,

4 Cein opposatzen eta alchatzen baita Iainco erraiten eta adoratzen den guciren contra: hala non hura iainco beçala, Iaincoaren templean iarten baita, bere buruä eracusten duela ecen iainco dela.

5 Ala etzarete orhoit ecē oraino çuequin nincela, gauça hauc erraiten nerauzquiçuela?

6 Eta orain cerc daducan badaquiçue, hura manifesta dadinçat bere demborán.

7 Ecen ia eguiten da iniquitatezco mysterioa: solament orain daducanac, *eduquiren du* ken daiteno artetic.

*Esa.11.4.* 8 Eta orduan manifestaturē da gaichtoa, *cein Iaunac deseguinen baitu bere ahoco Spirituaz, eta bere aduenimenduco claretateaz abolituren.

9 *Hura diot* ceinen ethortea baita Satanen operationearen araura, puissança gucirequin eta

ſignorequin eta gueçurrezco miraculurequin:
10 Eta iniquitatezco abuſione gucirequin galtzen diradenetã, ceren eguiaren amorioa ez paitute recebitu vkán ſaluatu içateco.
11 Eta halacotz igorriren draue Iaincoac abuſioniezco operationea, gueçurra ſinhets deçatençát:
12 Condemna ditecençat eguia ſinhetſi vkan eztuten guciac, baina iniquitatean placer hartu vkan dutenac.
13 Baina guc, Iaunaz onhetſi anayeac, behar drauzquiogu bethi eſquerrac eman Iaincoari çueçaz, ceren hatſeandanic elegitu baitzaituzte Iaincoac ſaluamendutara Spirituaren ſanctificationez, eta eguiazco fedeaz:
14 * Ceinetara deithu vkan baitzaituzte gure Euangelioaz Ieſus Chriſt gure Iaunaren gloriaren acquiſitionetacotz.

* *ceinetara, federa.*

15 Halacotz, anayeác, çaudete fermu eta educaçue ikaſſi duçuen doctriná, bada *gure* hitzez bada epiſtolaz.
16 Bada Ieſus Chriſt gure Iaun berac, eta gure Iainco eta Aita onhetſi gaituenac, eta eman cõſolatione eternala eta ſperança ona gratiaz,
17 Conſola ditzala çuen bihotzac, eta confirma çaitzatela hitz eta obra on orotan.

## CAP. III.

1 *Othoitz eguiteco Iaunaren hitzac laſter daguiançát.* 2. *Fedea.* 6, 10 *Trabaillatu nahi eztiradenéz.* 8. *Paul languiten ari içan.* 14 *Excommunicationea.*

Eph.6.19. col.4.3. 1 * GAineracoaz, anayeác, othoitz eguiçue guregatic, Iaunaren hitzac lafter daguiançat, eta glorifica dadin çuec baithan-ere beçala:

2 Eta gu deliura gaitecen gende defordenatu eta gaichto hautaric: ecen fedea ezta gucién.

3 Baina fidel da Iauna, ceinec confirmaturen baitzaituzte eta beguiraturen gaichtoaganic.

4 Affeguratzen-ere bagara Iaunean çueçaz, ecen denuntiatzen drauzquiçuegun gauçác eguiten-ere badituçuela eta eguinen.

5 Bada Iaunac chuchent ditzala çuen bihotzac Iaincoaren amoriora, eta Chriften beguira egoitera.

6 Anayeác, denuntiatzen drauçuegu halaber Iefus Chrift gure Iaunaren icenean, fepara çaitezten anaye defordenatuqui eta ez gureganic recebitu duen doctrinaren araura ebilten dẽ orotaric.

1.Cor.11.1 1.The.4.11 7 Ecen ceuroc badaquiçue * nola imitatu behar gaituçuen: * ecen ezgará defordenatuqui maneyatu içan çuen artean.

Act.20.34 1.cor.4.12. 1.thef.2.9. 8 * Eta eztugu nehoren oguia dohainic ian: baina trabaillurequin eta nequerequin gau eta egun languiten ari guinadela, çuetaric nehoren phorogu ez guinadençát.

9 Ez bothere eztugunez, baina gure buruén çuey exemplutan emaiteagatic, imita gaitzaçuençat.

10 Ecen çuequin guinadenean-ere haour de-

nuntiatzen guendrauçuen, ecen baldin cembeit trabaillatu nahi ezpada, ian-ere ezteçan.

11 Ecen ençuten dugu çuen artean badiradela batzu desordenatuqui dabiltzanic, deus ari eztiradelaric, baina curiosqui vici diradelaric.

12 Bada halaco diradeney denuntiatzen drauegu, eta othoitz eguiten Iesus Christ gure Iaunaz sossegurequin trabaillatzen ari diradela bere oguia ian deçaten.

13 * Eta çuec, anayeác, etzaiteztela enoya vngui eguitez. *Gal. 6.9.*

14 Eta baldin cembeitec gure hitza obeditzen ezpadu, epistolaz hura nota eçaçue: eta ezteçaçuela conuersa harequin, ahalque duençát:

15 Guciagatic-ere etsay beçala ezteçaçuela educqui, baina admonesta eçaçue anaye anço.

16 Bada Iaun baquezcoac bethiere diçuela baquea manera gucian. Iauna dela çuequin gucioquin.

17 Salutationea, ene Paulē escuz, baita seignale *ene* epistola gucietan: hunela scribatzen dut.

18 Iesus Christ gure Iaunaren gratia *dela* çuequin gucioquin.

*Thessaloniceanoetaratco bigarrena Athenestic scribatua.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN TIMOTHEOGANATCO EPISTOLA.

## LEHENA.

### CAP. I.

*4 Genealogiác. Questioneac. Iaincoaren edificationea. 5 Charitatea. 7 Legueco doctorac. 12 Paulec esquerrac Iaincoari emaiten. 15 Christ certara ethorri mundura. 19 Fedea. Conscientia ona. 20 Hymeneo eta Alexandre Satani liuratu.*

1 PAVLEC, Iainco gure Saluadorearen eta gure sperança Iesus Christ Iaunaren manamenduz Iesus Christen Apostolu denac,

*Act.16.1. rom.16.21. philip.2.19 1.thess.3.2.* 2 *Timotheo *neure* eguiazco semeari fedean, Gratia *dela hirequin*, misericordia *eta* baquea Iainco gure Aitaganic, eta Iesus Christ gure Iaunaganic.

3 Othoitz eguin drauadan beçala Ephesen egon andin, Macedoniarát ioaiten nincenean, *eguin eçac*, denuntia dieceançat batzuey eztteçaten bercelaco doctrinaric iracats.

*Berriz.4.7 eta 6.4. tit.1.14.* 4 Eta eztitecen behá *elhe çarretara eta genealogia fin gabetara, ceinéc lehen, questioneac engendratzen baitituzte ecen ez Iaincoaren edificatione fedeaz dena.

5 *Bada manamenduaren fina duc charitate bihotz chahutic eta conſcientia onetic *dena* eta fictione gaberico fedetic. Rom.13.10

6 Gauça hautaric batzu erauciric conuertitu içan dituc elhe vanotara:

7 Legueco doctor içan nahi diradelaric eta aditzen eztituztelaric erraiten eta aſſeguratzen dituzten gauçác.

8 * Eta baceaquiagu ecen ona dela Leguea, baldin nehorc harçaz bidezqui vſatzen badu. Rom.7.12.

9 Daquigularic ecen Leguea eztela iuſtoagatic iarri, baina gaichtoacgatic eta deſobedientacgatic: Iaincoaren menoſpreciaçaleacgatic eta vicitze gaichtotacoacgatic, religioneric eztaducatenacgatic eta profanoacgatic, aita-amén hiltzaleacgatic eta guicerhaileacgatic:

10 Paillartacgatic, bugreacgatic, guiça ebatſleacgatic, gueçurtiacgatic, deſperiuruacgatic, eta baldin deus berceric doctrina ſanoaren cōtratacoric bada.

11 *Cein doctrina baita* Iainco benedicatuaren Euangelio gloriazco niri cargutan eman içan çaitadanaren araura.

12 Eta eſquer emaiten diarocat ni fortificatu nauenari, *cein baita*, Ieſus Chriſt gure Iauna: ceinec fidel eſtimatu vkan bainau, *bere* cerbitzuan eçarriric:

13 *Ni*, lehen bainincén blaſphemaçale eta perſecutaçale eta iniuriaçale: baina miſericordia eguin içan ciaitadac: ecen ignorãtiaz eguin vkan diat, fedea eznuelaric.

14 Baina garaithu içan duc gure Iaunaren gratia federequin eta dilectionerequin * cein baita Iesus Christean.

* cein, dilectione.

15 *Haur duc* hitz segura, eta recebi deçagun guciz dignea, * ecen Iesus Christ ethorri içan dela mundura bekatorén saluatzera, ceinetarico lehena bainaiz ni.

Mat.9.13. marc.2.17.

16 Baina hunegatic misericordia eguin içan ciaitadac, nitan lehenic eracuts leçançát Iesus Christec clementia gucia, exemplu nincençát hura baithan vicitze eternaleracotzat sinhetsiren çutenén.

17 Bada Regue eternalari, immortalari, inuisibleari, Iainco çuhur berari *dela* ohore eta gloria secula seculacotz. Amen.

18 Manamendu haur gommendatzen drauat, Timotheo *ene* semé, aitzinetic hiçaz içan diraden prophetién araura, * heçaz bataillatze onez batailla adinçát:

Berriz.6.12.

19 Dualaric fede eta conscientia ona: hura batzuc iraitziric, fedeaz galtze eguin vkan dié.

20 Ceinetaric baitirade Hymeneo eta Alexander: * hec Satani eman drautzat, ikas deçatençát *guehiagoric* ez blasphematzen.

1.Cor.5.5.

CAP. II.

*1 Guiçon guciacgatic othoitz eguiteco. 4 Iaincoac nahi guciac salua ditecen 5. Arartecoa Christ. 7. Paul Gentilén Apostolu eta Doctor. 8 Leku gucietan othoitz eguiteco. 9 Emaztén abillamenduaz eta eguimbideaz. 15 Nola hec saluatzen.*

1 Exhor-

1 EXhortatzen aut bada gauça gucién aitzinetic eguin ditecē requestác, othoitzeac, supplicationeac, *eta* remerciamēduac guiçon guciacgatic:
2 Regueacgatic, eta dignitatetan diraden guciacgatic, vicitze baquezcoa eta emea eraman deçaguncát pietate eta honestate gucirequin.
3 Ecen haur gauça ona eta atseguinetacoa duc Iainco gure Saluadorearen aitzinean,
4 Ceinec nahi baitu gende guciac salua ditecē, eta eguiaren eçagutzera ethor ditecen.
5 Ecen Iaincobat *duc* eta arartecobat Iaincoarē eta guiçonén arteā, Iesus Christ guiçon *eguinic*:
6 Ceinec bere buruä eman vkan baitu rançoinetan guciacgatic: testimoniage içateco bere demborán:
7 * Ceinen publicaçale eta Apostolu ni ordenatu içā bainaiz (eguia cioat Christean etzioat guecurric) Gentilén Doctor federequin eta eguiarequin.

1.Timä. II.

8 Nahi diat bada guiçonéc othoitz daguiten leku orotan escuac chahuric altchatzē dituztelaric hira eta questione gaberic.
9 * Halaber emazteac-ere abillamendu honestez ahalquerequin eta modestiarequin acotra ditecē, ez bilo içurtzez, edo vrrhez edo perlaz, edo abillamendu soberanciatacoz:

1.pier.3.2.

10 Baina (emazte Iaincoaren cerbitzatzez professione eguiten duteney dagoten beçala) obra onez.

11 Emazteac ſilentiorequin ikas beça ſuiectione gucirequin.

1.Cor.14.34. 12 * Ecen emazteari iracaſtea, eztiarocat permetitzen, ezeta guiçonaren gainean authoritatez vſatzea, baina den ſilentiotan.

Gen.1.27. 13 * Ecen Adam lehenic formatu içan duc, guero Eua.

Gen.3.6. 14 Eta Adam eztuc ſeducitu içan, * baina emaztea ſeducitu içanic, transgreſſionearen cauſa içan duc.

15 Baina ſaluatua içanen duc haour engendratzez, baldin egon badadi fedean, eta dilectionean, eta ſanctificationean modeſtiarequin.

### CAP. III.

*1 Ipizpicuen officioa. 11 Hayen emaztéz. 12 Diacréz. 15 Iaincoaren etchea. 16 Pietatearen myſterioa.*

1 HItz ſegura *duc haur*, Baldin nehorc Ipizpicu içatera deſiratzen badu, obra excellentbat deſiratzen dic:

Tit.1.6. 2 * Baina behar dic Ipizpicuac içan irreprehenſible, emazte bakoitz baten ſenhar, vigilant, ſobre, modeſt, eſtrangerén oſtatuz gogotic recebiçale, iracaſteco carazco:

3 Ez mahatſarnoari emana, ez vkaldicari, ez irabaizte deshoneſtaren guthicioſo, baina benigno, ez reuoltari, ez auaritioſo:

4 Bere familia honeſtqui gobernatzen duelaric, bere haourrac ſuiectionetan eduquiten dituelaric honeſtate gucirequin:

5 (Ecen baldin edoceinec bere etchearen gobernatzen ezpadaqui, nolatan Iaincoarē Eliçari gogoa emanen drauca?)
6 Ez apprendiz berri, vrguluz hanturic deabruaren condemnationera eror eztadinçát.
7 Behar dic are harc duen teſtimoniage ona campocoetaric-ere: reprotchutara eta deabruē laçora eror eztadinçát.
8 Diacréc halaber *behar dic içan* honeſt, ez bi hitzetaco, ez mahatſarno anhitzari emanac, ez irabaizte deshoneſtaren guthicioſo:
9 * Eduquiten dutelaric fedearen myſterioa conſcientia chahurequin.

Leben. 1. 19

10 Eta hec-ere phoroga ditecen lehen, guero cerbitza deçaten, baldin reprotchu gabetaco ba dirade.
11 Halaber hayén emazteac *diraden* honeſt, ez gaitzerraile, *baina* ſobre, leyal gauça gucietan.
12 Diacreac diraden emazte bederaren ſenhar, gobernatzen dituztelaric honeſtqui *bere* haourrac eta bere etcheac.
13 Ecen vngui cerbitzatu duqueitenéc grado ona acquiſitzē dié beretzat, eta libertate handia Ieſus Chriſt baithango fedean.
14 Gauça hauc ſcribatzen drauzquiat, ſperança dudalaric ecen ſarri hiregana ethorriren naicela:
15 Eta baldin berancen badut, daquiançát nola behar den Iaincoaren etchean cōuerſatu, cein baita Iainco viciaren Eliçá, eguiaren habea eta ſuſtenguä.

16 Eta duda gabe, handi duc pietatearen myſterioa: ecen Iaincoa manifeſtatu içan dela haraguian, iuſtificatu dela Spirituan, ikuſſi içan dela Aingueruëz, predicatu içan çayela Gentiley, ſinhetſi içan dela munduan, goiti recebitu içan dela gloriara.

CAP. IIII.

*1 Azquen demboréz. 2 Deabruen doctriná. 3 Ezcóçaren eta viandén defendatzeaz. 7 Elhe profanoey ihes eguiteco. 8 Pietatea. 10 Sperança Iaincoa baithan.*

1 BAda Spirituac claroqui erraiten dic * ecen azqueneco dēboretan reuoltaturen diradela batzu fedetic ſpiritu abuſariey behatzen çaiztela, eta deabruén doctriney,

*2.Tim.3 1 2.pier.3 3. iud.18.*

2 Hypocriſiaz gueçurrac iracaſten dituztenén *doctriney*, ceinén conſcientiá cauterizatua baita,

3 Defendatzen dutelaric ezconcea *eta* viandetaric iatea, cein Iaincoac creatu baitrauzte vſatzeco remerciamendurequin fideley, eta eguiá eçagutu vkan duteney.

4 Ecen Iaincoaren creatura gucia *duc* on, eta deus ez iraizteco, baldin remerciamendurequin recebitzen bada.

5 Ecen *creaturá* ſanctificatu dihoac Iaincoaren hitzaz eta orationez.

6 Gauça hauc baldin proposa badietzéc anayey Iesus Christen ministre on aiçate, haci içanic fedearen, eta diligentqui iarreiqui atzayón doctrina onaren hitzetan.

7 *Baina iraizquic fable profanoac eta atsoenac irudiac: eta exerci eçac eure buruä pietateä.

Leben.1.4. berriz.6.4. 20. 2.tim.2.23 tite,3.9.

8 Ecen exercitatione corporala probetchu gutitaco duc: baina pietatea gauça gucietara probetchutaco duc, presenteco vicitzearen eta ethortecoaren promessa duelaric.

9 Hitz segurá *duc* haur, eta guciz recebi dadin dignea.

10 Ecen halacotz trabaillatzen-ere gaituc, eta escarniatzen, ceren sperança baitugu Iainco vician, cein baita guiçon gucién Saluadore, *eta* principalqui fidelén.

11 Gauça hauc denuntiaitzac eta iracats.

12 Nehorc hire gaztetassuna ezteçala menosprecia: baina aicen fidelén exemplu hitzean, cõuersationean, charitatean, spirituan, fedean, puritatean.

13 Ethor nadin artean, aquió iracurtzeari, exhortatzeari, doctrinari.

14 Ezteçála menosprecia hitan den dohaina, cein eman içã baitzaic prophetiaz, Ancianoén compainiaren escuén impositionearequin.

15 Gauça hauc praticaitzac, *eta* aicén gauça hautan attento: hire auançamendua agueri dençat gucién artean.

16 Gogoa emoc eure buruäri eta doctrinari: perseuera eçac gauça hautan: ecen baldin haur

badaguic, eure buruä duc ſaluaturen eta hiri behatzen çaizquianac.

C A P. V.

*1 Batbedera bere qualitatearẽ araura reprehenditzeco eta admoneſtatzeco. 3 Alhargunez. 17 Ancianoéz. 24 Bekatuéz. 25 Obra onéz.*

1 GViçon ancianoa ezteçala dorpequi reprehendi, baina ezhorta eçac aita beçala: gazteac, anáyeac beçala:
2 Emazte çaharrac, amác beçala: gazteac, arrebác beçala caſtitate gucirequin.
3 *Emazte* alhargunac ohoraitzac, eguiazqui alhargun diradenac.
4 Baina baldin cembeit *emazte* alhargunec haourric, edo ilobaſſoric badu, ikas beçate lehenic *berén* etche proprira pietaterẽ eracuſten, eta burhaſſoetara ordainaren rendatzen: ecen haour *duc* on eta placent Iaincoaren aitzinean.
5 Bada eguiazqui alhargun denac eta bera azquendu içan denac ſperança dic Iaincoa baithã, eta perſeueratzen dic othoitzetan eta orationetan gau eta egun.
6 Baina deliciosqui vici dena, viciric hila duc.
7 Gauça hauc bada denuntiaitzac, irreprehenſible diradençát.
8 Eta baldin edoceinec beréz eta principalqui etchecoéz artharic ezpadu, fedeaz vkatu dic, eta duc infidela baino gaichtoago.

9 *Emazte* alharguna hauta bedi ez hiruroguey vrthe baino gutiagotacoa, ſenhar baten emazte içana:

10 Obra onetan teſtimoniage duena : eya haourrac haci dituenez, eya eſtrangerac alogeatu dituenez, eya ſainduén oinac ikuci dituenez, eya affligituac aiutatu dituenez, eya obra on orori ardura iarreiqui içan çayonez.

11 Baina alhargun gazteagoac refuſaitzac : ecen bridá largatu dutenean Chriſten contra, ezcondu nahi dituc:

12 Bere condemnationea dutelaric, ceren bere lehen fedea iraitzi vkan baituté.

13 Eta guehiago, alfer egoile-ere diradelaric ikaſten dié etchez etche ebilten : eta eztituç ſolament alfer egoile, baina edaſle-ere, eta curioſo, behar eztiraden gaucéz dadaſſatelaric.

14 Nahi diat bada gazteac ezcō ditecen, haour daguiten, etchea goberna deçaten, occaſioneric batre etſayari eztemoten gaizqui erraiteco.

15 Ecē ia baztu itzuli içā dituc Satanen ondoā.

16 Baldin edocein fidelec edo cembeit fidelſac baditu *emazte* alhargunac, aiuta bitza hec, eta eztadin carga Eliçá, eguiazqui alhargun diradenén aſco dençát.

17 Vngui preſiditzen duten Ancianoac ohore doblaren digne eſtima bitez : principalqui hitzean eta doctrinán trabaillatzen diradenac.

18 Ecen Scripturác erraiten dic, * Idi bihitzen ari denari eztraucac ahoa lothuren. Eta, * Languilea bere ſariaren digne da.

*Deut. 25. 4*
*1. cor. 9. 9.*
*Mat. 10. 10*
*luc, 10. 7.*

19 Ancianoaren contra accusationeric ezteçála recebi biga edo hirur testimonioren azpian baicen.

20 Bekatu eguiten dutenac, gucién aitzinean reprehenditzac, berceac-ere baldur diradençát.

Berriz.6.1. 21 * Requeritzen aut Iaincoaren eta Iesus Christ Iaunaren eta Aingueru elegituén aitzinean, gauça hauc beguira ditzán, bata berceari preferitu gabe: deus eguiten eztuala alde batera makurtuz.

22 Escuac eztietzoala nehori bertan eçar, eta ezteçála communica berceren bekatuetã, eure buruä pur beguireçac.

23 Hemendic harát eztéçala vric edan, baina mahatsarno gutibatez vsat eçac, eure estomaca gatic, eta eure eritassun vssuacgatic.

24 Guiçon batzuén bekatuac aitzinean agueri dituc, eta aitzinean dihoaçac condemnationetan: eta batzuey ondoan-ere iarreiquiten ciaiztec.

25 Halaber obra onac-ere aitzinean agueri dituc: eta bercelaco diraden *obrác*, ecin estal daitezquec.

CAP. VI.

1 *Cerbitzariéz.* 4. 20 *Questione vanoey ihes eguitecn.* 6 *Pietatea.* 8 *Contentamendua.* 10 *Auaritiá.* 11 *Perseuerançá.* 13 *Christen aduenimendua.* 17 *Munduco abratsac.*

1 VZtarriren azpian diradē cerbitzari guciéc,bere nabuſſiac ohore ororen digne eſtima bitzate: Iaincoaren icena eta doctriná blaſphema eztitecençát.

2 Eta nabuſſi fidelac dituztenéc,eztitzatela menoſprecia cerē anaye diraden:baina aitzitic cerbitza bitzate,cerē fidelac eta onhetſiac diraden, ontaſſunean participant diradelaric.Gauça hauc iracats itzac eta exhorta.

3 Baldin nehorc berce doctrinaric iracaſten badu,eta conſentitzen ezpadu Ieſus Chriſt gure Iaunaren hitz ſanoetan, eta pietatearen arauëzco doctrinán,

4 *Hura* hantua duc, deus eztaquialaric,*baina erhotzen delaric queſtionén eta hitzezco contētionén ondoan, hetaric ſortzen dituc inuidiá, gudua,iniuriác,ſuſpicione gaichtoac,

5 Guiçon adimenduz corrumpituén eta eguiatic priuatu diradenén diſputatione vanoac, eſtimatzen dutelaric pietatea irabazte dela: retiradi halacoetaric.

6 Segur, irabazte handia duc pietatea contentamendurequin.

7 *Ecen deus eztiagu ekarri mundura: ſegura duc eraman-ere deus ecin deçaquegula.

8 Baina vitançá dugularic eta cerçaz eſtal ahal gaitecen,heçaz content içanen gaituc.

9 Ecen abraſtu nahi diradenac, erorten dituc tentationetara eta laçora, eta anhitz deſir erho-

*Lehen* 1. 4.

*Iob* 1.21.
*prou.* 27.26
*eccl.*5.14.

tara eta caltetacotara, ceinéc hundatzen baitituzte guiçonac destructionetara eta perditionetara.

10 Ecen gaitz gucién erroa auaritiá duc, cein desiratzen dutelaric batzu erauci içan baitirade fedetic, eta bere buruäc anhitz doloretan nahaspilatu vkan baitituzté.

11 Baina hic, Iaincoaren guiçoná, gauça hæy ihes eguiéc, eta iarreiqui aquié iustitiari, pietateari, fedeari, charitateari, patientiari, emetassunari.

12 Fedearen combat ona combati eçac, lot aquio vicitze eternalari, ceinetera deithu-ere baitaiz, eta confessione ona anhitz testimonioren aitzinean eguin vkan duc.

*Lehen 5.21*

13 *Denuntiatzen drauat gauça guciac viuificatzen dituen Iaincoaren, eta Iesus Christen aitzinean, *ceinec testificatu vkan baitu Pontio Pilateren azpian confessione ona:

*Mat.27.11 ioan 18.37*

14 Manamendu haur beguira deçán macula eta reprotchu gabe, Iesus Christ gure Iaunaren aduenimendurano:

*Lehen 1.11 apoc. 17.14 eta 19.16.*

15 Cein eracutsiren baitu bere dẽborán *Prince benedicatuac eta bakoitzac, reguén Regueac eta iaunén Iaunac:

16 Ceinec berac baitu immortalitate, nehor hurbil ecin daiten arguian habitatzen delaric, *cein ezpaitu guiçonec batec-ere ikussi, ez ecin ikus baiteçaque: ceini ohore eta indar seculacotz. Amen.

*Ioan 1. 18. 1.ioã 4.12.*

17 Mundu hunetan abrats diradeney denuntia

iecéc, eztiraden arrogant, *eta ezteçaten *bere* ſperançá eçar fermutate gabeco abraſtaſſunetan, baina Iainco vician, ceinec emaitẽ baitrauzquigu abundoſqui gauça guciac, vſatzeco:

*Marc 4.19 luc 12.15.*

18 Vngui eguin deçaten, obra onez abrats diraden, emaile on *eta* compuntquide onetaco *diraden*.

19 *Theſaurizatzen dutelaric beretaco fundament on-bat ethorquiçunera, ardiets deçatençat vicitze eternala.

*Matt.6.20 luc 12.23.*

20 O Timotheo, depoſita beguireçac, *ihes eguiten drauealaric oihu vanoéy *eta* profanoéy, eta falſuqui hala deitzen den ſcientiaco contradictioney:

*Lehen 1.4. eta 4.7.*

21 Cein *ſcientiaz* profeſſione eguiten çutelaric batzu fedetic erauci içan baitirade. Gratia *dela* hirequin. Amen.

*Timotheoganatco lehena ſcribatu Laodiceatic, cein baita Phrygia Pacatianoco hiri principala.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN TIMOTHEOGANATCO EPISTOLA BIGARRENA.

## CAP. I.

*1 Vicitzeco promessa Christean. 5 Timotheoren fedea. 6 Escuén impositionea. 7 Verthutezco spiritua. 8 Christez testimoniage ekartea. 9 Vocationea, Obrác, Gratiá Christez. 10 Haren victoriá, Vicitzea, Immortalitatea.*

1 PAVLEC Iesus Christen Apostolu Iaincoaren voróndatez *denac*, Iesus Christ baithã den vicitzearen promessaren araura,

2 Timotheo *neure* seme maiteari: gratia, misericordia *eta* baquea Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ gure Iaunaganic.

*Act.22.3.* 3 Esquer diarocat Iaincoari, *cein cerbitzatzen baitut neure aitzinecoacdanic conscientia purequin, nola paussu gabe baitut memorio hiçaz neure orationetan gau eta egun:

4 Hire ikusteco desir dudalaric, hire nigar chortez orhoitic, bozcarioz bethe nadinçát:

5 Orhoitzen naicela hitan den fictione gabeco fedeaz, cein lehenic habitatu içan baita hire a-

maſſo Loida baithan, eta hire atna Eunica baithan: eta ſegur nauc ecen hi baithan-ere *habitatzen dela.*

6 Cauſa hunegatic auiſatzẽ aut vitz deçán ene eſcuén impoſitionez hitan den Iaincoaren dohaina.

7 Ecen eztiraucuc eman Iaincoac iciapenetaco ſpiritubat, baina verthutetaco, eta dilectionetaco, eta adimendu ſanotaco *ſpiritubat.*

8 Ezaicela bada ahalque gure Iaunaren teſtimoniageaz, ezeta niçaz, bainaiz harẽ preſonér: baina aicén participant Euangelioco afflictionetan, Iaincoaren puiſſançaren araura:

9 Ceinec ſaluatu vkan baiquaitu, eta *bere* *vocatione ſainduaz deithu: *ez gure obrén cauſaz, baina bere ordenançaren *eta dembora eternalac baino lehen Ieſus Chriſt baithan eman içan çaicun gratiaren cauſaz.

1. Cor. 1. 2. ephes. 1. 3. Tit 3. 5. Rom. 16. 25. ephes. 1. 4. eta 3. 9 coloſ. 1. 26. tit. 1. 2. 2. pier. 1. 20

10 Eta manifeſtatu içan duc orain Ieſus Chriſt gure Saluadorearẽ ethorteaz, ceinec herioa-ere deſeguin vkan baitu, eta arguira eman vicitzea eta immortalitatea Euangelioaz:

11 *Ceinen publicaçale ni ordenatu içan bainaiz, eta Apoſtolu eta Gentilén doctor.

1. Tim. 2. 7

12 Halacotz gauça hauc-ere ſuffritzen citiat: guciagatic-ere eznauc ahalque: ecen baceaquiat nor ſinhetſi dudan: eta ſegur nauc ecen hura botheretſu dela ene depoſitaren beguiratzeco egun hartarano.

13 Educac eneganic ençun vkan dituan hitz ſanoén eguiazco formá, federequin eta Ieſus

Christ baithan den charitaterequin.

14 Deposit ona beguireçac Spiritu sainduaz, cein habitatzen baita gutan.

15 Badaquic haur, ecen aldaratu içan diradela eneganic Asian diraden guciac: ceinetaric baitirade Phygello eta Hermogenes.

16 Iaunac misericordia daguiola Onesiphoren etcheari: ecen anhitzetan recreatu vkan nic, eta ene cadenáz eztuc ahalquetu içan:

17 Aitzitic Romã içan denean guciz affectionatuqui bilhatu vkan niauc eta eriden:

18 Demola hari *othoi* Iaunac eriden deçan misericordia Iauna baithan egun hartan: eta cembat anhitz cerbitzu Ephesen-ere eguin drautan, hic guciz vngui daquic.

## CAP. II.

*3 Christen gendarmés. 9 Paulen estecaduren causá. 16 Oihu vanoey ihes eguiteco. 20 Vnci ohoretacoac eta desohoretacoac. 23 Questione erhoey ihes eguiteco. 24 Ministrearen eguimbidea.*

1 HI bada, ene semé, fortificadi Iesus Christ baithan den gratián:

2 Eta anhitz testimonioren arteã eneganic ençun dituan gauçác, iracats ietzec gende fideley, cein bercen-ere iracasteco sufficient içanen baitirade.

3 Hic bada trabaillu suffri eçac Iesus Christen

gendarmés on anço.

4 Eztuc nehor guerlán empatchatzen vicitzeco eguitecoéz, guerla eguiteco hautatu duenaren gogaraco dençát.

5 Halaber baldin nehorc combatic eguiten badu, eztuc coroatzen baldin bidezqui combatitu ezpada.

6 Laborariac trabaillatu behar dic fructuric recebi deçan baino lehen.

7 Conſideraitzac erraiten ditudan gauçác: Iaunac bada eman dieçála adimẽdu gauça gucietã.

8 Aicén orhoit Ieſus Chriſt reſuſcitatu içan dela hiletaric, Dauid-en hacitic *celaric*, ene Euangelioaren araura:

9 Ceinetan, gaizquiguile anço, affligitzen bainaiz eſtecailluetarano: baina Iaunaren hitza eztuc eſtecatua.

10 Halacotz gauça guciac ſuffritzen citiát elegituacgatic, hec-ere obteni deçatençát Ieſus Chriſt *Iaunean* den ſaluamendua, gloria eternalarequin.

11 Hitz ſegura *duc* haur: *Ecẽ baldin harequin hil içan bagara, harequin vicico-ere garela. *Rom.6.5.*

12 Baldin ſuffritzen badugu, regnaturen-ere harequin diagu: *baldin vkatzen badugu, harc-ere gu vkaturen guiaitic: *Mat.10.33 marc 8.38.*

13 Baldin deſleyal bagara, *hura *ordea* fidel diagoc, vka bere buruä ecin ceçaquec. *Rom.3.3. eta 9.6.*

14 Arramberritzac gauça hauc, proteſtatzen dualaric Iaunaren aitzinean ezteçan nehorc hitzez ihardaqui, *baita* probetchuric batre ekar-

ten eztuen gauça, *aitzitic* ençuleac erautzen dituena.

15 Diligentadi eure buruären Iaincoari approbatu presentatzera, confusione gabeco obrero, artezqui eguiaren hitza ebaquiten duála.

16 Oihu vanoac eta profanoac reprimitzac: ceré impietate hādiagotara auáçaturen baitirade.

17 Eta hayén hitza gágrená beçala alhaco duc, ceinetaric baitirade Hymeneo eta Phileto:

18 Cein eguiatic erauci içan baitirade, erraiten dutela ia resurrectionea eguin içan dela, eta erautzen dié edocein batzuén fedea.

19 Alabaina Iaincoaren fundaméta fermu diagoc, cigulu haur duelaric, Eçagutzen ditu Iaunac cein diraden harenac: eta, Retira bedi iniustitiataric Christen icena inuocatzé duen gucia.

20 Eta etche handi batetan eztuc solament vrrhezco eta cilharrezco vnciric, baina çurezcoric eta lurrezcoric-ere:* eta batzu ohoretacotz, eta berceac desohoretacotz.

Rom.9.21.

21 Bada nehorc baldin bere buruä hautaric chahu badeça, içanen duc vnci ohoretacotz sanctificatua, eta Iaunaré vsegetacotz carazcoa, eta Iaunaren obra on orotara appaindua.

22 Gaztetassunaren guthiciey-ere ihes eguiéc, eta iarreiqui aquió iustitiari, fedeari, charitateari, baqueari *bihotz purez Iauna inuocatzé dutenequin.

1.Cor.1.2.

23 Eta questione erhoac, eta instructione gabetacoac iraizquic, daquialaric ecen hec gudu engendratzen dutela.

24 Bada

24 Bada Iaunaren cerbitzariac eztic reuoltari içan behar, baina eme gucietara, iracaſteco carazco, patientqui gaichtoac ſupportatzen dituelaric:

25 Emetaſſunequin iracaſteri dituelaric opinione contrariotaco diradenac: eya noizpait Iaincoac vrriquimendu eman dieçaqueenez eguiaren eçagutzeco,

26 Eta emenda ditecen, haren vorondatearen *eguiteco, itzuriric* deabruaren laçotic, ceinez hatzamanac baitaude.

CAP. III.

*1 Azquen demborez. 10 Paulen perſecutionea. 14 Doctrinán perſeueratzeco. 16 Scripturez den probetchua.*

1 HAur bada iaquic, *ecen azquen egunetan içanẽ dela dembora periloſic.

*1 Tim. 4.1 2.pier 1.3. iud.18.*

2 Ecen içanen dituc guiçonac bere buruentár, auaritioſo, vantari, vrgulutſu, disfamaçale, aita-ametara deſobedient, ingrat, Iaincoaren menoſpreciaçale,

3 Affectione natural gabe, leyaltate gabe, calumniaçale, moderamendu gabe, crudel, on diradenén gaitzetſle,

4 Traidore, temerario, hantuac, Iaincoari baino voluptatey hobe erizle.

5 Pietatearen irudia dutelaric, baina haren ver-

thutea vkatzen dutelaric: apparta adi bada hetaric.
6 Ecen hautaric dituc etchetara forratzen diradenac, eta gathibu dadutzatenac emazteto bekatuz cargatuac, guthicia diuerſez erabiliac,
7 Bethiere ikaſten dutelaric,eta behinere eguiaren eçagutzera hel ecin daitezquelaric.
Exod.7.11. 8 *Eta hala nola Ianneſec eta Iambreſec reſiſtitu baitraucate Moyſeſi: halaber hauc-ere eguiari reſiſtitzen diraucoé: guiçon adimenduz corrumpituac, fedeaz den becembatean reproboac.
9 Baina eztié guehiagoric auã̃çaturen: ecen hauén erhogoá claro içanẽ duc gucietara, hayenaere içan den beçala.
10 Baina hic complituqui eçagutu vkan duc ene doctriná,gobernua,intentionea,fedea, emetaſſuna,charitatea,patientiá:
11 Perſecutioneac, afflictioneac, cein niri heldu içan baitzaizquit Antiochian, Iconian, Lyſtrian: nolaco perſecutioneac ſuffritu vkan ditudan *cioat*, eta gucietaric idoqui vkan niauc Iaunac.
12 Eta Iaincoaren beldurrean Ieſus Chriſtean vici nahi diraden guciec-ere perſecutione ſuffrituren dié.
13 Baina guiçon gaichtoac eta abuſariac auançaturen ditut gaizquiagora ſeducitzen dutelaric eta ſeducituac diradelaric.
14 Bada hi egon adi ikaſſi dituán eta emã̃ içan çaizquián gaucetan, daquialaric norenganic

ikaſſi vkan dituán:

15 Eta nola haourra-danic letra ſainduac eçagutu vkan dituán, ceinéc çuhur ahal baiheçaquete ſaluamendutacotz Ieſus Chriſt baithan den fedeaz.

16 *Scriptura gucia *duc* diuinoqui inſpiratua, eta probetchable doctrinatzeco, redarguitzeco, corregitzeco *eta* inſtruitzeco iuſtitiatan:

2.Pier.1. 20.

17 Compli dadinçát Iaincoaren guiçona, obra on orotara complituqui inſtruituric.

CAP. IIII.

1, 5 *Paulec exhortatzen,* 6 *Bere herioa aitzinetic erraiten.* 8 *Fideién iuſtitiazco coroa.* 16 *Paul guciéz abandonnatu,* 17 *Eta Iaincoaz aiutatu.*

1 REqueritzen aut bada nic Iaincoaren eta Ieſus Chriſt Iaunaren aitzinean, ceinec bere aduenimenduan eta reſumán viciac eta hilac iugeaturēbaititu:

2 Predica eçac hitza, perſeuera eçac orduz eta orduz lekora: ari adi redarguitzen, mehatchatzen, exhortatzen, emetaſſun eta doctrina gucirequin:

3 Ecen içanen duc demborabat ezpaitute doctrina ſanoa ſuffrituren: baina beharri quillicorrac dituztelaric, beréc bere deſirén arauezco iracaſtunac bilduren baitituzté:

4 Eta eguiatic beharriac itzuliren baitituzté, eta fabletara emanac içanen baitirade.

5 Baina hic veilla eçac gauça gucietá, ſuffritzac

afflictioneac, eguin eçac euangeliſtaren obra, eguic hire adminiſtrationea approbatua den.
6 Ecen ni ia ſacrificatu içatera nihoac, eta ene partitzeco demborá hurbil duc.
7 Combat ona combatitu diát, *neure* curſua acabatu diát, fedea beguiratu diát.
8 Gaineracoaz, beguiratua diagotac iuſtitiazco coroá, cein rendaturen baitraut Iaunac egun hartan, iuge iuſto harc: eta ez niri ſolament, baina haren aduenimendua deſiratu vkan duqueiten guciey-ere *bay*.
9 Diligentadi enegana ethortera ſarri.
10 Ecen Demaſec abandonnatu niauc, preſenteco ſecula haur onhetſiric, eta Theſſalonicerat ioan içan duc: Creſcens Galatiarát, Tite Dalmatiarát.
Coloſſ.4.19 11 *Luc bera duc enequin. Marc harturic erekarrac eurequin: ecen probetchable diat cerbitzucotz.
12 Tychique-ere igorri diat Epheſera.
13 Troaſen Carpo baithan vtzi vkan dudan mantelina, ethor adinean ekarrac eurequin, eta liburuäc, *baina* principalqui pergamioac.
14 Alexãdre cobre-arotzac anhitz gaitz eguin dirautac: Iaunac bere eguinén arauez renda dieçola.
15 Harenganic hi-ere beguiradi: ecen haguitz gure hitzey reſiſtitu vkan dirauec.
16 Nehor etziaitadac aſſiſtitu, neure lehen defenſán, aitzitic guciéc abandonnatu vkan niaué: imputa eztaquiela.

17 Baina Iauna aſſiſtitu içan ciaitadac, eta fortificatu vkan niauc,niçaz predicationea compli dadinçát,eta hura ençun deçatençát Gentil guciéc:eta deliuratu içan nauc lehoinaren ahotic.

18 Eta deliuraturen niauc Iaunac obra gaichto gucitaric eta emparaturẽ bere reſuma celeſtialeco: hari *dela* gloria ſecula ſeculacotz. Amen.

19 Salutaitzac Priſca eta Aquila, *eta Oneſiphororen familiá. *Leben* 1.16

20 Eraſto guelditu içan duc Corinthen: eta Trophimo Mileten vtzi diat eria.

21 Diligentadi negu aitzinean ethortera. Salutatzen auté Eubuloc eta Pudenſec eta Linoc eta Claudiac eta anaye guciéc.

22 Ieſus Chriſt Iauna *dela* hire ſpirituarequin. *Haren* gratia *dela* çuequin. Amen.

*Timotheo Epheſeco Eliçaco lehen Ipizpicu ordenatuaganatco bigarrena Romaric ſcribatu, Paul berriz Ceſar Neronen aitzinean preſentatu içan cenean.*

* *
*

# S. PAVL APOSTOLVAREN TITEGANATCO EPISTOLA.

CAP. I.

1 *Eguiaren eçagutzea.* 2 *Sperançá.* 3 *Predicationea.* 5 *Tite cergatic Cretan vtzi.* 7 *Ipiz picu eguiazcoaren officioa.* 10 *Circoncisionecoez.* 11 *Irabaciagatic, behar eztiraden gauçác iraçasten dituztenez.* 15 *Deus ez satsuric chahuendaco.* 16. *Obrác gaberico fedea.*

1 PAVLEC Iaincoaren cerbitzari eta Iesus Christē Apostolu *denac*, Iaincoaren elegituén fedearē eta pietatearen tenorez den eguiaren araura,

2 Vicitze eternalaren sperançacotzát, cein promettatu vkan baitu Iainco gueçurti eztenac *dembora eternalén aitzinetic, eta manifestatu bere demboretan:

Rom.16.25. ephes.3.9. coloss.1.26 2.tim.1 9 1.pier.1.20 Galat. 1.1.

3 *Diot* bere hitza, Iainco *gure* Saluadorearen ordenançaren tenorez *niri cargutan eman içan çaitadan predicationeaz: Tite *neure* seme eguiazcoari *gure artean* commun den fedearen arauez.

4 Gratia *dela hirequin* misericordia *eta* baquea Iainco Aitaganic, eta Iesus Christ Iaun gure Saluadoreaganic.

5 Causa hunegatic vtzi vkan aut Cretan goitico diraden gaucén corrigitzen continua deçançát, eta ordena ditzán hiriz hiri Ancianoac, nic ordenatu drauadan beçala:

6 *Baldin cembeit bada irreprehensibleric emazte bakoitz baten senhar, haour fidelac dituelaric, ez dissolutionez accusatuac, edo rangea ecin daitezquenac.

*1.Tim.3.1.*

7 Ecen Ipizpicuac behar dic içan irreprehensible, Iaincoaren etchearen gobernari anço, ez tén porfidioso, ez coleric, ez mahatsarnoari emana, ez vkaldicari, ez irabazte deshonestaren guthicioso:

8 Baina estrangerén ostatuz gogotic recebiçale, onén onhetsle, çuhur, iusto, saindu, moderatu:

9 Instructionearen araura den hitz fidelaren eduquile, doctrina sanoz exhorta-ere ahal deçançát, eta contrastatzen diradenac vençut.

10 Ecen baduc anhitz rangea ecin daitenic eta vanoqui minçaçaleric, eta adimenduén seduciçaleric, principalqui Circõcisionetic diradenac: hæy ahoa boçatu behar ciayec:

11 Hec etcheac ossoqui erautzen citié, behar eztiraden gauçác iracasten dituztela irabazte deshonestaren causaz.

12 Erran dic hayén arteco cembeitec, hayén propheta propriac, Cretatarrac bethi gueçurti, bestia gaitzac, sabel naguiac.

13 Testimoniage haur eguiazcoa duc: causa hunegatic reprehenditzac hec viciqui, fedean sano diradençát:

1.Tim.1.4. 14 *Behatzen eztutelaric Iudnén fabletara, eta eguiatic aldaratzen diraden guiçonén manuetara.

Rom.14. 20. 15 *Gauça guciac chahuendaco chahu dituc baina satsuendaco eta infidelendaco eztuc deus, chahuric, aitzitic dituc satsu hayén adimendua eta conscientiá.

16 Professione eguiten dié Iaincoa eçagutzen dutela, baina obraz vkatzen dié, abominable diradelaric eta desobedient eta obra on orotara reprobatuac.

CAP. II.

*2 Çaharréz. 6 Gaztéz. 7 Exemplu ona. 9 Cerbitzariéz. 11 Iaincoaren gratiáz. 13 Sperançáz. 14 Cer finetara Iesus Christec guregatic bere buruä eman.*

1 BAina hic denuntiaitzac doctrina sainduari dagozcá gauçác.
2 Guiçon çaharrac sobre diraden, graue, moderatu, sano fedean, charitatean *eta* patiẽtián.

3 Emazte çaharrac halaber *diraden* saindutassunari dagocan continentiataco, ez gaitzerraile, ez mahatsarno anhitzari emanac, gauça honestén iracatsle:

4 Emazte gazteac instrui ditzatençát moderatu içatẽ, bere senharrén onhetstẽ, bere haourrén maite vkaiten:

Ephe.5.23 5 Çuhur içaten, chahu, etchean egoile, on, *bere senharrén suiet: Iaincoaren hitza blasphema eztadinçát.

6 Guiçon gazteac halaber exhortaitzac moderatu diraden.

7 Gauça gucietan eracuften dualaric eure buruä obra onẽ exemplu, doctrinán *eracuften dualaric* integritate, grauitate,

8 Hitza fano, *eta* condemna ecin daiten *beçalaco* : contraftatzen dena confundi dadinçát, çueçaz gaizquiric cer erran ez vkanez.

9 *Cerbitzariac bere nabuffién fuiet diraden, gauça gucietan hayén gogara eguitẽ dutelaric, contradiçale eztiradelaric:

*Eph.6.5. colof.3.22. 1.pier.2.18*

10 Deus appartatzen eztutelaric, baina leyaltate on gucia eracuften dutelaric, gauça gucietan Iainco gure Saluadorearen doctriná orna deçatençát.

11 *Ecen aguertu içan ciayec guiçon guciey Iaincoaren gratia faluagarria.

*1.Cor.1.2. coloß.1.10.*

12 Iracaften gaituela, infidelitateaz eta munduco defiréz renuntiaturic, fobrequi, iuftoqui, eta religiofqui vici garén prefenteco fecula hunetan:

13 Dohain onetaco fperançaren eta gure Iainco hãdi eta Saluadore Iefus Chriften gloriataco aduenimendu excellẽtaren beguira gaudelaric:

14 Ceinec eman baitu bere buruä guregatic, gu redemi guençançát iniquitate gucitaric, eta purifica guençançát bere populu particular, obra onetara affectionatu içateco.

15 Gauça hauc denuntiaitzac, eta ari adi exhortatzen eta reprehenditzen authoritate gucirequin: nehorc ezeçala hi menofprecia.

CAP. III.

*2 Princiey eta guehientassuna duteney obedientia ekarteco. 4, 5 Iaincoaren misericordiáz saluatzen. 7. Gratiáz iustificatzen. 9 Questioney ihes eguiteco. 10 Heretico denaz. 14 Obra onéz.*

Rom.13.1. 1 ADmoneſtaitzac * Principaltaſſunén eta Poteſtatén ſuiet diraden, Gobernadoreac obedi ditzaten, obra on orotara preſt diraden:

2 Nehorçaz gaizquiric ezterraten, diraden gudu gabe, moderatu, emetaſſun gucia eracuſten dutelaric guiçon gucietara,

1.Cor.6.11 3 * Ecen gu-ere noizpait adimẽdu gabe guentuán, deſobediént, abuſatuac, anhitz moldetaco deſirac eta voluptateac çerbitzatzen guentuela, malitiatan eta inuidiatã vici guinela, gaitzetſiac guinela: *eta* elkarri gaitz erizle.

4 Baina Iainco gure Saluadorearen benignitatea eta guiçonetaraco amorioa aguertu içã denean,

2.Tim.1.9 5 * Ez eguin vkan ditugun obra iuſtoéz, baina bere miſericordiaz ſaluatu vkan guiaitic regenerationezco garbitzez, eta Spiritu ſainduazco arramberritzez:

6 Cein eraitſi vkan baitu gutara abundoſqui Ieſus Chriſt gure Saluadoreaz:

7 Haren gratiaz iuſtificaturic heredero eguin guentecençát vicitze eternaleraco ſperançaren araura.

8 Hitz ſegura *duc* haur, eta gauça hauc nahi diat affirma ditzán, artha dutençát obra onén

entretenitzera Iaincoa ſinhetſi dutenéc: huná, guiçonẽ on eta probetchutaco *diraden* gauçác.

9 *Baina queſtione erhoac eta genealogiac eta contentioneac eta Legueazco ihardúquiteac empatchaitzac: ecen probetchu gabetaco dituc eta vano.

*1.Tim.1.4. eta 4.7. 2.tim.2.23*

10 Guiçõ hereticoa behingo eta berrizco aduertimenduaren ondoan iraitzac:

11 Daquialaric ecen eraucia dela halacoa eta huts eguiten duela, bere buru beraz condemnatua delaric.

12 Igor deçadanean Artemas hiregana edo Tychique, diligenta albeitendi enegana ethortera Nicapoliſera: ecen han neguáren iragaitera deliberatu diát.

13 Zeno Legueco doctora eta Apollo diligentqui guidaitzac, deuſen faltaric eztutén.

14 Bada ikas beçate gurec-ere obra onetã emplegatzen neceſſario diraden gaucetaco, fructu gabe eztiradençát.

15 Salutatzen auté enequin diraden guciéc. Salutaitzac fedez on darizcutenac. *Iaincoaren* gratia *dela* çuequin gucioquin, Amen.

*Tite Cretacoén Eliçaco lehen Ipizpicu ordenatuagana Nicapolis Macedoniaçotic ſcribatua.*

# S. PAVL APOSTOLVAREN PHILEMONGANATCO EPISTOLA.

CAP. I.

*1, 9 Paul presonér. 5 Philemonen fedea eta charitatea. 10 Onesimo Philemonen cerbitzaria Paulen moyenez Christinotu. 24 Paulen aiutariac.*

1 PAVLEC Iesus Christen presonerac, eta anaye Timotheoc, Philemon gure maiteari eta lagunari,

2 Eta Aphia maiteari, eta Archippe gure soldado-quideari, eta hire etheco Eliçari:

3 Gratia *dela* çuequin eta baquea gure Iainco Aitaganic eta Iesus Christ Iaunaganic.

1.Thes.1.2. 2.Thes.1.3 4 * Esquerrac emaiten dirautzat neure Iaincoari, bethiere hiçaz memorio eguiten dudalaric neure orationetan,

5 Ceren baitançut hire charitatea, eta fedea cein baituc Iesus Iauna baithara, eta saindu guciac baithara:

6 Hire fedearen communicationea botheretsu dençát, eçagut dadinçát çuetã den on gucia Iesus Christez.

7 Ecen bozcario handi diagu eta consolatione

hire charitateaz, ceren ſainduén halſarrac hiçaz recreatu icen baitirade, anayé.
8 Halacotz, Ieſus Chriſtean libertate handi badut-ere hiri eguimbide duanaren manatzeco:
9 *Badere* charitateagatic lehen othoitzez niagoc, hunelaco banaiz-ere, bainaiz Paul anciaoa, eta orain preſoner-ere Ieſus Chriſtgatic.
10 *Othoitzen aut *bada* neure ſeme Oneſimo eſtecailluetan engendratu vkan dudanagatic: Coloſ.4.9.
11 Berce orduz ez hire probetchutaco içan denagatic, baina orain hire eta ene probetchutaco denagatic: cein igorten baitrauát.
12 Hic bada hori, erran nahi baita, ene halſarrac, recebi eçac.
13 Cein nic nahi bainuen neurequin eduqui, hire orde cerbitza nençançát Euangelioaren eſtecailluetan :
14 Baina hire vorondatea gabe eztiát deus eguin nahi vkan bortchaz beçala ezlicençát hire vnguia, baina gogo onezco.
15 Ecen aguian halacotz hireganic partitu içan duc appurbatetacotz, bethierecotz recebi eçançát:
16 Ez engoitic ſclabotan, baina ſclabo baino conditione hobeagotan, anaye maitetan, principalqui ene : cembatez bada guehiago eure, eta haraguiaren arauez eta Iaunaren arauez?
17 Bada baldin lagunetan banaducac, recebi eçac ni beçala.
18 Eta baldin cerbait bidegabe eguin badrauc,

edo çor bahau,hura niri imputa ieçadac.

19 Nic Paulec ſcribatu diát *haur* neure eſcuz, nic pagaturen diát: eztarradan ecen are eure burua-ere niri çor drautadala.

20 Bay,anayé,placer *haur* nic hireganic recebi deçadan Iaunean,recreaitzac ene halſarrac Iaunean.

21 Hire obedientiáz ſegur içanez ſcribatu drauat,daquidalaric ecen erraiten dudan baino guehiago-ere eguinen duála.

22 Baina are bertaric oſtatu appain ieçadac:ecen ſperança diát çuen orationéz emanen natzaiçuela:

23 Epaphras ene preſoner quideac Ieſus Chriſtean,

24 Marc-ec,Ariſtarchec, Demaſec *eta* Luc-ec, ene aiutariec,ſalutatzen auté.

25 Ieſus Chriſt gure Iaunaren gratiá *dela* çuen ſpirituarequin. Amen.

*Philemongana Romaric Oneſimo ſclaboarequin ſcribatua.*

# APOSTOLVAREN

## HEBRAICOETARATCO EPISTOLA.

CAP. I.

*2 Iaincoa minçatu içan çaicu bere Semeaz, cein baita haren herederoa, 3 Eta imaginá, haren eſcuinean iarria, 4 Excellentago Aingueruäc baino, cein baitirade Iaincoaren miniſtre. 8 Chriſt Iainco.*

1 ANHITZETAN eta anhitz maneraz lehenago Iaincoa minçaturic *gure* Aitey Prophetéz, azqueneco egú hautan minçatu içan çaicu guri *bere* Semeaz,

2 Cein eçarri vkan baitu gauça gucién heredero, ceinez mundua-ere eguin vkan baitu:

3 * Cein, gloriaren claretate eta haren perſonaren imagina propria delaric eta ſuſtengatzen dituelaric gauça guciac bere hitz botheretſuaz, gure bekatuén purgationea bere buruaz eguinic, iarri içan baita haren maieſtatearen eſcuinean leku goretan.

*Sap.7.26. col.1.15.*

4 Cembatenaz Aingueruäc baino excellentago eguin içan baita, hambatenaz hec baino icen excellentagobat acquiſitu vkan du hetaric abantail.

5 Ecen egundano Aigueruëtaric ceini erran

*Psal.2.7.* vkan drauca, * Ene Semea aiz hi, nic egun engendratu aut hi? Eta berriz, * Ni içanen natzayo hari Aita, eta hura içanen çait niri Seme?

*berriz,5.5. 2.Sa.7.14. 1.chro.22. 10.*

6 Eta berriz *bere* Seme lehen iayoa mundura aitzinaratzen duenean, dio * Eta adora beçate hura Iaincoaren Ainguerü guciéc.

*Psal.97.7.*

7 Eta Ainguerüéz den becembatean dio, * ceinec bere Ainguerüäc eguiten baititu haice, eta bere miniſtreac, ſu flamma:

*Psal.104.4*

8 Baina Semeaz den becembatean *dio* * O Iaincoa, hire thronoa ſecula ſeculácotz duc: eta hire Reſumaco ſceptrea *duc*, çucenezco ſceptrea.

*Psal.45.7*

9 On eritzi draucac iuſtitiari, eta gaitz eritzi draucac iniquitateari: halacotz vnctatu vkan au Iaincoac, eure Iaincoac bozcariotaco olioz, eure lagunetaric abantail.

10 Eta, * Hic hatſeandanic, Iauna, lurra fundatu vkan duc, eta ceruäc hire eſcuen obrác dituc:

*Psal.102. 26.*

11 Hec deſeguinẽ dituc, baina hi permanẽt aiz: eta guciac veztidura beçala çaharturen dituc:

12 Eta eſtalqui baten ançora *hic* dituc hec biribilgaturén, eta muthatzeco diaudec: baina hi hura bera aiz, eta hire vrtheac eztituc faltaturen.

13 Eta Ainguerüëtaric ceini erran vkan drauca egundano, * Iar adi ene eſcuinean, eçar ditzaquedano hire etſayac hire oinén ſcabella?

*Psal.110.1. 1.cor.15.25 berriz.10. 13.*

14 Eztirade guciac ſpiritu cerbitzu eguiten dutenac, cerbitzuco igorten diradelaric saluamenduco heredero içanen diradenacgatic.

CAP. II.

*1 Euangelioaren obedientián egoitea. 9 Ieſus herioco paſſioneagatic gloriaz coroatu. 12 Chriſtē anaye. 14 Herioaren iaurgoa. 17 Chriſt ſacrificadore ſubirano.*

1 HAlacotz behar dugu hobequi gogoa eman ençun vkā ditugū gauçetara, iragaitera vtzi eztitzagunçát.

2 Ecen baldin Aingueruéz errā içán cē hitza fermu içan bada, eta tranſgreſſione eta deſobedientia guciac recompenſa bidezcoa recebitu vkan badu,

3 Nolatan gu itzuriren guiaizquio baldin hain ſaluamendu handiaz conturic ezpadaguigu? *cein lehenic Iaunaz beraz declaratzen haſſitic, hura ençun vkan çutenéz confirmatu içan baitzaicu:

Marc.16. 19.

4 Teſtimoniage rendatzē ceraüelaric Iaincoac ſignoz eta miraculuz, eta verthute diuerſez, eta Spiritu ſainduaren diſtributionez bere vorondatearen araura,

5 Ecen eztu Aingueruén ſuiet eguin ethorteco den mundua, ceinez minço baicara:

6 Eta teſtificatu vkan du nombeit cembeitec, dioela, *Cer da guiçoná, harçaz orhoit aicen? edo *cer da* guiçonarē ſemea, hura viſita deçán?

Pſal.8.5.

7 Eguin vkan duc hura chipichiago Aingueruäc baino: gloriaz eta ohorez coroatu vkā duc

hura,eta ordenatu vkan duc hura eure eſcuezco obrén gaineco.

Mat.28.28. 1.cor.15.27. 8 * Gauça guciac ſuiet eguin vkan dituc haren oinén azpico. Eta gauça guciac haren ſuiet eguin dituenaz gueroz, eztu deus vtzi haren ſuiet eztén: baina eztacuſſagu oraino gauça guciác haren ſuiet diradela.

Phil.1 8. 9 * Baina Ainguerüäc baino chipichiago eguin içan cena,ikuſten dugu cein baita Ieſus,*bere* herioco paſſioneagatic,gloriaz eta ohorez coroatu içan dela:Iaincoaren gratiaz guciacgatic herioa daſta leçançát.

10 Ecen conuenable cen harc,ceinegatic *baitirade* gauça hauc gucioc,eta ceinez *baitirade* gauça hauc gucioc,anhitz haour gloriara eramaitẽ çuenaz gueroz, hayén ſaluamenduaren Princea afflictionez conſecra leçan.

11 Ecen bay ſanctificaçalea,bay ſanctificatzen diradenac, batganic dirade guciac, cauſa hunegatic ezta ahalque hayén anaye deitzera,

Pſal 22.23 12 Dioela,*Denuntiaturen diraueat hire icena neure anayey, *eta* Eliçaren erdian laudaturen aut hi.

Pſal.18.3. 13 Eta berriz,*Ni fida içanen naiz hartan.Eta

Eſa.8.18. berriz, * Huná ni eta Iaincoac niri eman drauzquidan haourrac.

14 Ceren bada haourrac participant baitirade haraguian eta odolean, hura-ere halaber participant eguin içan da hetan beretan, * herioaz

Oſe.13.14. 1.cor.15.54 deſeguin leçançát herioaren iaurgoá çuena, cein baita deabrua;

15 Eta deliura litzançát herioaren beldurrez, *bere* vici gucian sclabo içatera suiet ciraden guciac.

16 Ecen segur eztitu Ainguruäc hartu vkan, baina Abrahamen hacia hartu vkan du.

17 Halacotz behar cen gauça gucietan anayeac irudi licén, misericordioso licençát eta Sacrificadore subirano fidel Iaincoa baitharatco gaucetan, populuaren bekatuén pagamenduaren eguiteco.

18 Ecen suffritu vkan duenaren gainean tentatu içanic tentatzen diradenén-ere aiutatzeco botheretsu da.

CAP. III.

*1 Christ Apostolu eta Sacrificadore. 2 Fidel Iaincoagana. 5 Moysez. 6 Iaincoaren etchea. 7. Christen fedean egoitea. 19 Incredulitatea.*

1 BAda, anaye sainduác, vocatione celestialen participant çaretenác, considera eçaçue gure confessioneco Apostolua eta Sacrificadore subiranoa, *cein baita*, Iesus Christ,

2 *Ordenatu vkan duenarençat fidel dena: Moyses-ere haren etche gucian beçala. Nom.12.7.

3 Ecen *hambatez* haur Moyses baino gloria handiagoren digne estimatu içan da, cembatez ohore handiagotan baita etchea edificatu duena, ecen ez etchea bera.

4 Ecen etche oro norbeitez edificatzen da: eta gauça hauc guciac edificatu dituena, Iaincoa da.

5 Eta segur Moyses fidel içan da haren etche

gucían cerbitzari beçala, guero erraiteco ciraden gaucén testificatzeco:

6 Baina Christ seme beçala da bere etchean: ceinen etchea baicara gu, baldin confidançá eta gloriatzen garen sperançá finerano fermu eduqui baditzagu.

7 Halacotz Spiritu sainduac erraiten duen beçala, *Egun baldin harẽ voza ençun badeçaçue

Psal.95.8. berriz 4.7.

8 Eztitzaçuela gogor çuen bihotzac, tharritamenduan beçala, tentationeco egunean desertuan:

9 Non tentatu vkan bainaute çuen aitéc, experimentatu vkan bainaute- eta ikussi baitituzte ene obrác berroguey vrthez.

10 Halacotz enoyatu içan naiz generatione hunez, eta erran vkan dut, Bethiere huts eguiten duté bihotzez, eta eztituzté eçagutu vkan ene bideac.

11 Bada cin eguin vkan dut neure hirán, Baldin *seculan* sarthuren badirade ene reposean.

12 Gogoauçue, anayeác, çuetaric cembeitetan eztén bihotz sinheste gabetaco gaichtoa, Iainco viciaganic reuoltagarri:

13 Baina exhorta eçaçue elkar egun oroz, egungo egun deitzen deno, çuetaric nehor gogor eztadinçát bekatuaren enganioz.

14 Ecen Christen participant eguin içan gara, bay baldin hatse hura, ceinez sustengatzen baicara, fermu eduqui badeçagu finerano.

15 Erraiten deno, Egun baldin haren voza ençun badeçaçue, eztitzaçuela gogor çuen bi-

hotzac tharritamenduan beçala.

16 Ecen batzuc ençun vkan çutenean, tharrita ceçaten *Iauna*:baina ez Egyptetic Moysesez ilki içan ciraden guciéc.

17 Baina ceinéz enoyatu içan da berroguey vrthez? ala ez bekatu eguin vkan çutenéz, ceinén gorputzac erori içan baitirade desertuan?

18 Eta ceini cin eguin cerauen,haren reposean etziradela sarthuren, obeditu vkan etzuteney baicen?

19 Eta badacussagu incredulitatearen causaz ecin sarthu içan diradela.

CAP. IIII.

1 *Hitza fede gabe alfer.* 4, 9 *Sabbath eguiazcoa.* 6 *Incredulitatea.* 12 *Hitzaren efficacioa.* 14 *Sacrificadore handia, Iesus.* 16 *Gratiazco thronoa.*

1 GAren bada beldur guertha eztadin çuetaric cembeit haren reposean sartzeco promessa vtziric, priuatua eriden eztadin.

2 Ecen guri-ere euangelizatu içan çaicu hæyere beçala:baina etzaye deus probetchatu predicationeco hitza,ceren ezpaitzén fedearequin nahassia ençun vkan çutenetan.

3 Ecen sarthuren gara reposean gu, sinhetsi vkan dugunoc, erran duen beçala, * Bada cin eguin vkan dut neure hirán, Baldin *seculan* sarthuren badirade ene reposean:mũduaren hatseã danic *haren* obrác acabatu içan baciraden-ere.

*Psal. 95.11*

4 Ecen nombeit hunela erran vkan du çazpi garren egunaz den becembatean, * Eta reposa cedin Iaincoa çazpigarren egunean bere obra gucietaric.

Gen.2.2. deut.5.14.

5 Eta hunetan berriz, Baldin *seculan* sarthuren badirade ene reposean.

6 Ikussiric bada oraino batzu sartzen diradela hartan, eta lehenic denũtiatu içan çauenac ezti radela sarthu içan *bere* incredulitatearen causaz:

7 Berriz determinatzen du egun iaquin-bat, Egun, Dauid baithan erràiten duela hãbat dem boraren buruän, (nola erran içan baita) * Egun baldin haren voza ençun badeçaçue, eztitzaçuela gogor çuen bihotzac.

Lehen,3.7.

8 Ecen baldin Iosuec hæy eman balaraue reposic, etzatequeen guehiagoric berce egunez minçatu.

9 Halacotz, guelditzen çayó sabbathgoabat Iaincoaren populuari.

10 Ecen Iaincoaren reposean sarthu içan dena, reposatu içan da hura-ere bere obretaric, Iaincoa beretaric beçala.

11 Daguigun bada diligentia repos hartan sartzera: nehor eztadin eror desobedientiazco exemplu berera.

12 Ecen Iaincoaren hitza vici *da* eta efficaciotaco, eta den ezpata bi ahotacoric baino penetrantago: eta ardiesten du arimaren eta spirituarẽ, bay eta iũcturén eta hunén diuisionerano: eta da pensamẽduén eta bihotzeco intẽtionén iuge

13 Eta ezta creaturaric batre haren aitzinean

agueri eztenic: aitzitic gauça guciac dirade bil-
luciac eta irequiac haren beguietan ceinequin
baitugu gure eguitecoa.

14 Bada ſacrificadore ſubiranoa *eta* handia Ie-
ſus, Iaincoaré Semea, ceruäc penetratu dituena
dugunaz gueroz, daducagun confeſſione *haur*.

15 Ecen eztugu Sacrificadore ſubirano gure
infirmitatéz compaſſioneric ecin duqueen-bat,
baina *dugu* manera berean gauça gucietan ten-
tatu içan dena, ſalbu bekatuan.

16 Goacen bada ſeğurançarequin gratiazco
thronora, miſericordia ardiets eta gratia eriden
deçaguncát aiuta behar demboraco.

CAP. V.

1 *Sacrificadore handiaren officioa.* 5 *Chriſt Sacrifica-
dore,* 9 *Eta obeditzen dutenén ſaluamendu eternal.*
12 *Iaincoaren hitzaren elementac.* 13 *Eznea, eta
vianda.*

1 ECẽ Sacrificadore ſubirano gu-
cia guiçonetaric hartzen da, eta
guiçonengatic ordenatzen da
Iaincoa baitharaco gaucetan:
offrenda ditzançát donoac eta
ſacrificioac bekatuacgatic:

2 Ceinec behar den becembat ignorãtéz eta
falta eguiten dutenéz pietate ahal baituque: ce-
ren bera-ere infirmitatez inguratua baita:

3 Eta *infirmitate* haren cauſaz behar baitu no-
la populuagatic, hala bere buruägatic-ere of-
frendatu *ſacrificio* bekatuacgatic.

4 Eta nehorc eztrauca emaiten bere buruäri

1.Chro.23. 13. ohore haur, baina Iaincoaz deitzen denac, *Aaron beçala.

5 Hala Christec-ere eztrauca bere buruäri ohore haur eman vkan Sacrificadore subirano eguin ledin, baina hari erran vkã draucanac, *Ene Semea aiz hi, nic egun engendratu aut hi.

*Psal.2.7. lehen,1.5.

Psal.110.4 berriz,7.17

6 Bercetan-ere erraiten duen beçala, * Hi aiz Sacrificadore eternalqui Melchisedech-en façoinera.

7 Ceinec bere haraguiaren egunetan heriotaric empara ahal ceçaquenari othoitzac eta supplicationeac oihu handirequin eta nigar vrirequin offrendatu cerautzanean, eta beldur cenetic ençun içan cenean,

8 Seme bacen-ere ikassi vkan baitu obedientiá suffritu vkan dituen gaucetaric:

9 Eta sanctificatu içanic, eguin içan çaye hura obeditzen duten guciéy saluamendu eternalaren authór:

10 Iaincoaz icendatu içanic Sacrificadore subirano Melchisedech-en façoinera.

11 Ceinez propos lucea baitugu erraiteco, eta declaratzeco difficila: ceren ençutera naguitu içan baitzarete.

12 Cereneta demboraren arauez iracatsle içan behar cinetelaric, berriz iracatsi behar baitzarete cer diraden Iaincoaren hitzetaco lehẽ hatseco elementac: eta halaco eguin çarete non ezne behar baituçue, eta ez vianda cerraturic.

13 Ecen norc-ere eznéz vsatzen baitu, harc iustitiazco hitzaren experientiaric eztu: ecen

haour da:

14 Baina handituentzat da vianda cerratua, *hala nola* costumatu içanez sensuac exercitatuac dituztenén onaren eta gaitzaren beretzeco.

CAP. VI.

1 *Perfectionetara auançatzea.* 7 *Lur fructu ekarten duena eta eztuena.* 10 *Fidelen obrác.* 16 *Iuramenduaren fina.* 18 *Sperança fermua.* 20 *Christ Sacrificadore subirano.*

1 BAda, vtziric Christez hatse emaiten duen hitza, auança gaitecen perfectionera: berriz eçarten eztugularic obra hiletarico penitentiaren, eta Iaincoa baitharaco fedearen fundamenta,

2 Baptismoén doctrinazco eta escuén impositionezco, eta hilén resurrectionezco, eta iudicio eternalezco *fundamenta.*

3 Eta haur eguinen dugu baldin behinçát permetti badeça Iaincoac.

4 * Ecen ezta possible behin illuminatu içan diradenac, eta dohain celestiala dastatu vkan dutenac, eta Spiritu sainduan participant eguin içan diradenac, Ber.10.26.

5 Eta dastatu vkan dutenac Iaincoaren hitz ona, eta ethorteco den secularen verthuteac:

6 Baldin eror baditez, berriz arramberri ditecen penitentiatara, ikussiric ecen Iaincoaren Semea berriz crucificatzen dutela hetan den becembatean, eta escarniotara emaiten dutela.

7 Ecen gainera ethorten çayón vria maiz eda-

ten duen lurrac eta lancen duteney belhar ſaſoi-
nezcoric ekarten drauenac, recebitzen du be-
nedictione Iaincoaganic:
8 Baina elhorri eta kardu ekarten duena, re-
probatua *da* eta malediƈtionearen hurbil, cei-
nen fina erre içatera *beha baitago*.
9 Baina ſeguratzen gara çueçaz den becem-
batean, maiteác, gauça hobez, eta ſaluamendua-
requin eguitenago denez: hunela minço baga-
ra-ere.
10 Ecen Iaincoa ezta iniuſto, ahanz daquión
çuen obrá eta haren icenera eracutſi vkan du-
çuen trabailluzco charitatea, ſainduey aiuta e-
guin eta eguiten draueçuen becembatean.
11 Baina deſir dugu çuetaric batbederac artha
bera eracuts deçan, ſperançaren ſegurança be-
thecotzat finerano:
12 Notchalent eguin etzaitezten çát, baina fe-
dez eta patientiaz promeſſac heretatzen dituz-
tenén imitaçale.
13 Ecē Abrahami promes eguin ceraucanean
Iaincoac, ceren berce handiagoz ecin iura bai-
tzeçaqueen, iura ceçan berarçaz,
*Gene.*12.2. *eta* 17.4. *eta* 22.16.
14 Cioela, *Segur benedicatuz benedicaturen
aut, eta multiplicatuz multiplicaturen aut.
15 Eta hala patientqui iguriquiric recebitu v-
kan du promeſſa.
16 Ecen guiçonéc berac baino handiagoz iu-
ratzen duté, eta confirmationetaco iuramēdua,
differentia guciaren finetan eduquiten duté.
17 Gauça hunetan Iaincoac abundoſquiago

promesseco herederoey bere conseilluaren fermetate mutha ecin daitequena eracutsi nahiz, iuramenduz seguratu vkan du:

18 Bi gauça mutha ecin daitezquenez (ceinétan impossible baita Iaincoac gueçurric erran duen) cósolatione segura dugunçát, recursa dugunóc proposatu içan çaicun sperançaren vkaitera:

19 Cein baitaducagu arimaren angura segurbat eta fermubat beçala, eta vela barnean diradénetarano sartzen den-bat *beçala*.

20 Non Iesus aitzindari guregatic sarthu içan baita Melchisedec-en façoinera Sacrificadore subirano eternalqui eguin içanic.

CAP. VII.

*1, 15 Melchisedech Christen figura. 11, 18 Sacrificadoregoa Leuiticoa abolitu eta kendu. 21 Christ Sacrificadore eta alliançaren fiadore. 24, 28 Eta araiteco fidelén saluatzeco.*

1 ECen *Melchisedech haur *cen* Salemgo regue, Iainco subiranoaren Sacrificadore, cein bidera ilki içan baitzayón Abrahami haur reguén desseguitetic itzultzen cela, eta harc ceçan benedica:

Gen.14.18

2 Hari hamarrena-ere gauça gucietaric parti cieçón Abrahamec: eta lehenic *hura* da interpretatzen iustitiazco regue, eta guero Salemgo regue-ere: cein errá nahi baita baquezco regue:

3 Aita gabe, ama gabe, leinu gabe: eztuelaric

egunén hatſeric,ez vicitzearen finic: baina Iaincoaren Semearen irudico eguin içanic,dago Sacrificadore eternalqui.

4 Conſidera eçaçue bada cein handi eguin içan den haur, ceini Abraham patriarchac deſpuilletaco hamarrena-ere eman baitzieçón.

5 Eta Leuiren ſemetaric diradenéc Sacrificadoregoa dutelaric, *manua badute populuaganic hamarrenaren hartzeco Leguearen arauez, erran nahi baita, bere anayetaric, Abrahamen guerruncetic ilki içan badirade-ere.

Nomb.18.21.

6 Baina hec *diraden* leinu bereco contatzen eztenac,hamarrena hartu vkan du Abrahamganic, eta promeſſac cituena benedicatu vkan du.

7 Eta contradictioneric batre gabe chipién dena guehién denaz benedicatzen da.

8 Eta hemen hiltzen diraden guiçonec hamarrenac hartzen dituzté: baina han vici dela teſtimoniage duenac *hartzen ditu.*

9 Eta(hunela minça nadin) Abrahamtan detchematu içan da Leui bera-ere, ceinec hamarrenac hartzen ohi baititu.

10 Ecen hura oraino *bere* aitaren guerruncean cen, Melchiſedec Abrahami bidera ilki içan çayonean.

11 Beraz baldin perfectionea Sacrificadoregoa Leuiticoan içan baliz (ecen populuac Leguea haren azpian recebitu vkan du) cer behar cen goitiric berce Sacrificadorebat Melchiſedech-en façoinera altcha ledin, eta ezladin Aaronen façoinera erran?

12 Ecen Sacrificadoregoaren officioa cambiatu içanic, neceſſario da Leguearèn cambioa-ere eguin dadin.

13 Ecen gauça hauc norçaz erraiten baitirade *hura* berce leinuri appartenitzẽ çayó, cein *leinutaric* nehorc ezpaitu aldarea cerbitzatu vkan.

14 Ecen claro da Iudaren leinutic ilki içan dela gure Iauna, cein leinutan ezpaitu Moyſeſec Sacrificadorẽgoaz deus erran.

15 Eta are *haur da* claroago, ceren Melchiſedech-en façoinera ilkiten baita berce Sacrificadorebat:

16 Cein ezpaita *Sacrificadore* eguin içan manamendu carnaleco Leguearen arauez, baina vicitze immortaleco puiſſançaren arauez.

17 Ecen teſtificatzen du hunela, *Hi *aiz* Sacrificadore eternalqui Melchiſedech-en façoinera.

Pſal. 110.4 leben 5 6.

18 Ecen aitzineco manamẽdua abolitzẽ da bere debilitateagatic eta probetchu gabeagatic.

19 Ecen eztu deus perfectionetara eraman vkan Legueac: baina *içan da* ſperança hobeagoren preparationebat *ceinez hurbiltzen baicara Iaincoagana.

*ceinez, ſperançaz,

20 Eta iuramendu gabe *içan* eztén becembatean (ecen berceac iuramendu gabe Sacrificadore eguin içan dirade.

21 Baina haur iuramendurequin, hari erran vkan draucanaz, *Iuratu vkan dic Iaunac, eta etziayóc doluturen, Hi *aiz* Sacrificadore eternalqui Melchiſedech-en façoinera)

Pſal. 110. 4

22 Hambatenaz alliança hobeagoren fiadore

eguin içan da Ieſus.

23 Eta Sacrificadoréz den becembatean, anhitz eguin içan dirade, cerē herioaz empatchatzen baitziraden egoitera.

24 Baina hunec, ceren eternalqui egoiten baita, Sacrificadoregoa perpetual bat du.

25 Eta halacotz ſalua-ere perfectoqui ahal ditzaque, harçaz Iaincoagana hurbiltzen diradenac, bethi vici delaric hecgatic ararteco içateco.

26 Ecen beharra guenduen halaco Sacrificadore ſubirano bat guenduen, ſaindua, innocenta, macularic gabea, bekatoretaric ſeparatua, ceruäc baino gorago altchatua:

27 Ceinec ezluen beharric egun oroz, berce Sacrificadore ſubiranoéc beçala, *lehenic bere bekatuacgatic ſacrificioric offrendatu, guero populuarenacgatic: ecen *haur* behingoaz eguin vkan du bere buruä offrendaturic.

Leui.16 11

28 Ecen Legueac Sacrificadore ſubirano ordenatzē ditu guiçon infirmoac: baina iuramenduco hitz Leguearen ondocoac, *ordenatzen du* Seme eternalqui ſanctificatua.

## CAP. VIII.

1 *Chriſt Sacrificadore ſubirano,* 6 *Ararteco.* 8 *Alliança berria.* 10 *Legue bihotzetan ſcribatua.* 12 *Bekatuac edequi.* 13 *Alliança çaharra abolitu.*

1 BAda erraiten ditugun gaucén ſommarioa *haur da*, Halaco ſacrificadore ſubirano bat dugula, cein iarria baita *Iaincoaren* ma-

ieſtateco thronoaren eſcuinean, ceruëtan:

2 Sanctuarioco miniſtre eta eguiazco Tabernacleco, cein fincatu baitu Iaunac, eta ez guiçonac.

3 Ecen Sacrificadore ſubirano gucia donoén eta ſacrificioén offrendatzeco ordenatzen da: bada, neceſſario da hunec-ere duen cerbait cer offrenda.

4 Ecen baldin lurrean baliz, Sacrificadore-ere ezliçateque, Leguearen arauez donoac offrédatzen dituzté Sacrificadoreac irauté luqueiteno.

5 Ceinéc gauça celeſtialén patroina eta itzala cerbitzatzé baitute, Moyſeſi diuinoqui ihardetſi içan çayón beçala Tabernaclea acabatu behar çuenean, *Bada ikuſſac (dio) eguin ditzán gauça guciac mendian eracutſi içan çayán patroinaren araura.

Exo.25.40 act.7.44.

6 Baina orain *gure Sacrificadore ſubiranoac* miniſterio excellentagoa obtenitu vkan du, cembatenaz Alliança hobeago baten ararteco baita, cein promes hobeagoén gainean ordenatu içan baita.

7 Ecen baldin lehen hura deuſen falta içan ezpaliz, bigarrenari etzaiqueon bilhatu lekuric.

8 Ecen hec reprehenditzen dituelaric, dioſte, *Huná, ethorri dirade egunac, dio Iaunac, complituren baitut Alliança berribat Iſraeleco etchearen gainean eta Iudaco etchearen gainean.

Hiere.31, 31,32,33, 34. rom.11.27 hebr.10.16

9 Ez hayén aitequin eguin vkan nuen Alliançaren araura, hayén eſcua hartu nuen egunean Egypteco lurretic idoqui nitzançát, ceren ez-

paitirade hec ene Alliançán egon, eta nic menospreciatu vkan ditut hec, dio Iaunac.

10 Ecen haur da egun hayén ondoan Israëleco etchearequin eguinen dudan Alliançá, dio Iaunac, Eçarriren ditut neure Legueac hayén adimenduan, eta hayén bihotzean ditut scribaturen: eta içanen naiz hayén Iainco, eta hec içanen dirade ene populu.

11 Eta eztu iracatsiren batbederac bere hurcoa, ez batbederac bere anayea, dioela, Eçagut eçac Iauna: ecen eçaguturen nauté chipienetic hayén arteco handieneranoco guciéc.

12 Ecen amatigatua içanen naiz hayén iniquitatetara eta hayén bekatuetara, eta eznaiz guehiagoric orhoit içanen hayén iniquitatéz.

13 Berribat erraiten duenean, çahartzen du lehena: eta çahartzen eta ancianotzen dena abolitu içateari hurbil dagoca.

## CAP. IX.

*1 Bi Tabernacle. 9 Legueco sacrificioac demborataco. 12 Christ leku sainduetan behin sarthu. 14 Haren odolac chahutzen. 15 Christ Alliança berriaren ararteco. 24 Harc Iaunaren aitzinean guregatic comparitzen. 26 Christ behin offrendatu.*

1 BEraz bacituen lehen *Alliançac ere* cerbitzu diuinoaré ordenançác, eta sanctuario mundanoa.

2 Ecé Tabernaclea edificatu içan da, *diot*, lehena ceinetan *baitziraden* candelera, eta mahaina, eta propositione-

co oguiac,*cein deitzen baita *Leku* ſainduac.

3 Eta bigarren velaren ondoan *cen* Tabernaclea, Sainduén ſainduac deitzen dena:

4 Vrrhezco encenſerbat çuelaric, eta Alliançaco Arká oſſoqui vrrhez inguru eſtalia: ceinetan baitzén vrrhezco pegarbat, non baitzén Mãna, *eta Aaronen cihor lilitu içan cena: *eta Alliançaco Tauláć.

5 *Eta haren gainean gloriazco Cherubinac *ciraden* Propitiatorioari itzal eguiten cerauca-tela, ezta gauça haùçaz orain particularqui minçatzeco mengoaric.

6 Eta gauça hauc hunela ordenatuac içanic, lehen Tabernaclean bethiere ſartzen ciraden Sacrificadoreac cerbitzuaren complitzeagatic.

7 *Baina bigarrenean, vrthean behin Sacrificadore ſubiranoa bera *ſartzen cen*, ez odol gaberic, cein offrendatzen baitzuen bere buruägatic eta populuaren faltacgatic:

8 Harçaz declaratzen çuela Spiritu ſainduac, oraino etzela irequi ſanctuarioco bidea, lehen tabernaclea oraino çutic egoiten ceno, cein *baitzén* dembora preſent hartaco figurá:

9 Ceinetan donoac eta ſacrificioac offrẽdatzen baitziraden, cerbitzua eguiten çuenaren conſcientiá, ecin ſanctifica ceçaquetelaric.

10 Solamẽt ianharitan, eta edaritan, eta ikutze diuerſetan, eta ceremonia carnaletan, haur corregi çaitequeen demboraráno ordenatuac:

11 Baina Chriſt içateco ciraden onén Sacrificadore ſubirano ethorriric, Tabernacle handia-

*cein, tabernaclá

Nomb.17.10.

1.Reg.8.9.
2.chr.5.10.
Exo.25.22

Exo.30.10
leuit.16.2

go eta perfectoago batez, ez escuz eguinaz, erran nahi baita, ez creatione hunetacoz:

12 Eta ez aker edo aretze odolez, baina *bere* odol propriaz behin sarthu içan da *leku* sainduetan redemptione eternala obteni turic.

Leui.16.14 nomb.19.4 13 *Ecen baldin cecenén eta akerrén odolac, eta bigáren hauts barreyatuac, satsuac sanctificatzen baditu haraguiaren puritateaz den becembatean:

1.Pier.1.19 1.ioan 1.7. apoc.1.6. 14 *Cembatez areago Christen odolac, ceinec Spiritu eternalaz bere buruä macularic gabe Iaincoari offrendatu baitrauca, chahuturen du obra hiletaric çuen conscientiá *Iainco viciaren cerbitzatzeco?

Luc 1.73.

15 Eta halacotz da Testamentu berriaren ararteco, *herioa artean iarriric, leheneco Testamentuaren azpian ciraden transgressionén redemptionetan, deithuéc heretage eternaleco promessa recebi deçatençát.

Rom.5.6. 1.pier.3.18

16 Ecen testamenturic den lekuan, necessario da testamentu eguilearen herioa den.

Gala.3.15. 17 *Ecen testamentua hilétan confirmatu da, ikussiric ecen oraino eztuela balio testamentu eguilea vici deno.

18 Bada, lehena-ere ezta odolic gabe dedicatu içan.

19 Ecen iracurri cerautzanean manamēdu guciac Leguearen arauez Moysesec populu guciari, harturic aretzén eta akerrén odola vrarequin, eta escarlatā tintatu ilerequin eta hyssoparequin bay liburuä bay populu gucia ihizta citzan:

20 Cioela, *Haur da Iaincoac çuey ordenatu drauçuen Teſtamentuco odola. Exod. 24. 8

21 Guero Tabernaclea-ere halaber, eta cerbitzuco vnci guciac, odolez ihizta citzan.

22 Eta quaſi gauça guciac Leguearen arauez odolez purificatzen dirade, eta odol iſſurtze gabe barkamenduric ezta eguiten.

23 Behar içan da beraz ceruëtan diraden gaucén figurác, hunelaco gauça hauçaz purifica litecen, baina celeſtial berac *purifica ditecen* hauc diraden baino ſacrificio hobez.

24 Ecen Ieſus ezta *leku* ſaindu eſcuz eguinetan ſarthu, cein baitziraden eguiazcoey ihardeſten cerauecen figurác: baina ceruän berean, orain Iaincoaren beguitharte aitzinean guregatic cõparitzeco.

25 Baina ez anhitzetan bere buruä offrenda deçançát, Sacrificadore ſubiranoa *leku* ſainduetan vrthe guciaz berceren odolequin ſartzen cen beçala.

26 (Bercela ſuffritu behar vkan çuqueen anhitzetan munduaren fundationeaz gueroztic) baina orain behin ſeculén conſummationean, bekatuaren deſtructionetan, bere buruäzco ſacrificioaz comparitu içan da.

27 Eta hala nola ordenatu baitzaye guiçoney behin hiltzera, eta guero iugemendua:

28 *Halaber Chriſt-ere behin offrendatu içanic anhitzen bekatuac aboli litzançát, berrizco aldian bekatu gabe aguerturen çaye haren beguira daudeney ſaluamendutacotz. Rom. 5. 8. 1. pier. 3. 18

CAP. X.

*1 Legueac ez sanctificatzen. 6 Iaincoa ceren esquez egon. 10 Sanctificationea. 12 Christ Iaincoaren escuinean. 14 Oblatione bakoitzbat. 16 Alliãçá. 18 Bekatuén barkamendua. 22 Christgana ioaitea. 23 Sperançazco confessionea. 24 Charitatea. 26 Spiritu sainduaren contra den bekatua. 30 Mendequioa defendatzen. 32 Afflictioneac. 36 Patientiá. 38 Fedea.*

1 ECen Legueac ethorteco ciraden onén itzala çuelaric, ez gaucén imagina vicia, vrthe oroz ardura offrendatzen cituzten sacrificio heçaz beréz, ethorten ciradenac iagoitic ecin sanctifica citzaqueen.

2 Bercela ala etziratequeen gueldítu offrendatu içatetic, ikussiric ecen sacrificatzen çutenéc behin purificatu içanic, bekatutaco conscientiaric batre guehiagoric etzuqueitela vkan?

3 Bada *sacrificio* hetan bacén vrthe oroz bekatuen commemoratione arramberritubat.

4 Ecen impossible cen cecenén eta akerrén odolaz bekatuén kentzea.

*Psal. 40.7.* 5 Halacotz, munduan sartzean, dio, *Sacrificioric ez offrẽdaric eztuc nahi vkan, baina gorputzbat appropiatu vkan drautac niri.

6 Halaber holocaustac ez oblationea bekatuagatic etzaizquic placent içan:

7 Orduan erran vkan dut, Huná, ethorten nauc (liburuären hatsean scribatua da niçaz) eguin deçadan, o Iaincoá hire vorondatea:

8 Lehen erran çuenaren gainean. Sacrificioric ez offrendaric, ez holocauſtic ez oblationeric bekatuagatic eztuc nahi vkan ez eztituc approbatu: (cein Leguearen arauez offrẽdatzen baitirade) orduan erran vkan du, Huná, ethorten nauc eguin deçadan, o Iaincoa, hire vorondatea.

9 Kentzen du *beraz* lehena, guerocoa eçar deçançát.

10 Cein vorondatez ſanctificatu içan baicara, Ieſus Chriſtẽ gorputzarẽ behingo oblationeaz.

11 Sacrificadore oroc bada aſſiſtitzen çuen egun oroz adminiſtratzen eta maiz ſacrificio berac offrendatzen cituela, ceinéc iagoitic bekatuac ecin ken baitzitzaqueizten:

12 Baina haur ſacrificio bakoitzbat bekatuacgatic offrendaturic, *eternalqui iarria da Iaincoaren eſcuinean.

*Lehen* 1. 13

13 Goitico denaren beguira dagoelaric, *haren etſayac haren oinén ſcabella eçar diteno.

*Pſal* 110.2.
1.*cor*.15.25
*lehen* 1.13.

14 Ecen oblatione bakoitz batez conſecratu vkan ditu ſeculacotz ſanctificatzen diradenac.

15 Eta teſtificatzen draucu Spiritu ſainduac berac-ere: ecen aitzinetic erran duenaz gueroz,

16 *Haur da egun hayén ondoan hequin eguinen dudan alliançá, dio Iaunac, Emanen ditut neure Legueac hayén bihotzetan, eta hayén adimenduetan hec ditut ſcribaturen:

*Hier*.31.33
*rom*.11.27.
*lehen*.8.8.

17 Eta hayen bekatuéz eta iniquitatéz ez naiz guehiagoric orhoit içanen.

18 Bada gauça hauen barkamẽdua den lekuan, ez ta guehiago oblationeric bekatuagatic.

19 Ikussiric bada, anayeác, badugula libertate leku sainduetan sartzeco Iesusen odolaz,
20 Dedicatu draucun bide frescoan eta vician gaindi, veláz, erran nahi baita, bere haraguiaz:
21 Eta *badugula* Sacrificadore handibat Iaincoaren etchearen carguä duenic:
22 Goacen eguiazco bihotzequin eta fedezco seguranççarequin, conscientia gaichtotaric bihotzac chahuturic:
23 Eta ikuciric gorputza vr chahuz, daducagun *gure* sperançaren confessionea variatu gabe (ecen fidel *da* promettatu duena)
24 Eta gogoa demogun elkarri charitatera eta obra onetara incitatzeco:
25 Vtziten eztugularic gure congregationea, batzuc costuma dutē beçala, baina exhortatzen dugularic *elkar*: eta haur hambatenaz guehiago cembatenaz baitacussaçue hurbiltzē dela egun hura.

*Leben 6.4.*

26 *Ecen baldin iaquiara bekatu badaguigu eguiarē eçagutzea recebituz gueroztic, ezta guehiago sacrificioric bekatuacgatic gueldítzen:
27 Baina iudicioarē beguira egoite terriblebat, eta suaren furia aduersarioac iretsiren dituē-bat.
28 Baldin cēbeitec menospreciatu balu Moysesen Leguea, *misericordiaric batre gabe, biguen edo hiruren testimoniagetic hiltzen cen.

*Deut. 17.6 eta 19.15. mat. 18. 16 ioan 8. 17. 2. cor. 13. 1.*

29 Cembatez vste duçue tormenta borthitzagoa merecitu duqueela, Iaincoarē Semea oinén azpian eçarri vkan duqueenac, eta alliançaco odola, ceinez sanctificatu baitzén, profanotan estimatu duqueenac: eta gratiazco Spirituari in-

iuria eguin drauqueonac?
30 Ecen badaçagugu errã duena,*Ene da mendecatzea, nic rendaturen dut, dio Iaunac. Eta berriz, Iaunac iugeaturen du bere populua.
Deu.32.35 rom.12.19
31 Gauça horriblea da Iainco viciaren eſcuetara erortea.
32 Orhoit çaitezte aitzineco egunéz, ceinetan illuminatu içan cinetenaz gueroztic, afflictionezco combat handi ſuffritu vkan baituçue:
33 Alde batetic gucién monſtrançatan eſcarnioz eta tribulationez eçarri içã çarete: eta berce aldetic ſtatu hartan erabilten ciradenenén lagun eguin içan çaretenean.
34 Ecen ene eſtecaduretaco afflictionean-ere participãt eguin içan çarete, eta çuen onén galtzea bozcariorequin recebitu vkan duçue: cinaquitelaric ceuroc baithan onhaſſun hobebat duçuela ceruëtan, eta permanent denic.
35 Ezteçaçuela bada iraitz çuen confidançá, ceinec baitu recompenſa handia.
36 Ecen patientia behar duçue, Iaincoaren vorondatea eguin duqueçuenean promeſſa recebi deçaçuençát.
37 Ecen oraino dembora appurto appurtobat, eta ethorteco dena ethorriren da, eta eztu beranthuren.
38 *Eta iuſtoa fedez vicico da: baina baldin *cembeit* apparta badadi, eztu ene arimác hartan placeric hartzen.
*Abac.2.4. rom.1.17. gal.3.11.*
39 Baina guezgara perditionetara appartatzẽ garenac, baina fedeari iarreiquiten guiaizquionac arimaren ſaluamẽdutan.

CAP. XI.

*2 Fedearen excellentiá eta fructuac. 6 Fedea gabe ecin içan Iaincoaren gogaraco. 16 Iaincoaren ciuitatea. Promessac Aitetaric ethorri.*

1 BAda, fedea da nehor sperançatan den gaucén fundamenta, eta ikusten eztiraden gaucác eracusten dituena.
2 Ecen harçaz aitzinecoec testimoniage vkan duté.

*Gene.1.1. ioan 1.10.* 3 *Fedez aditzen dugu Iaincoaré hitzaz mundua eguin içan dela: gauça inuisiblén demóstratione eguin ledinçát.

*Gene.4.4. Matth.23. 35.* 4 *Abelec fedez Cainec baino sacrificio excellentagoa Iaincoari offrédatu vkan drauca: *cein *fedez* testimoniage obtenitu vkan baitu iusto cela, ceren Iaincoac haren donoéz testificatzen baitzuen: eta oraino *fede* harçaz hil delaric minço da.

*Gene.5.24. eccl.44.16. eta 49.16.* 5 *Fedez Henoch eraman içan da, herioa ikus ezleçançát: eta ezta eriden içan, ceren eraman baitzuen Iaincoac: ecen eraman cedin baino lehen, testimoniage vkan ceçan Iaincoaren gogaraco içan cela:
6 Bada impossible da fede gabe *haren* gogaraco içatea: ecen Iaincoagana ethorten denac, behar da sinhets deçan ecen *Iaincoa* badela, eta hura bilhatzen dutenén recompensaçale dela.

*Gene.6.13. eccl.44.17.* 7 *Fedez Noéc, diuinoqui auertitu içanic oraino ikusté etziraden gaucéz, beldurturic, appre-

ſta ceçan arká bere familiaren ſaluatzeco : cein arkaz condemna baitzeçan mundua:eta eguin cedin fedearen arauez den iuſtitiaren heredero.

8 *Fedez Abrahamec deithu cenean obedi ceçan *Iaincoa*, heretagetan hartu behar çuen lekura ioan ledinçát,eta parti cedin norat ioaiten cen etzaquialaric.

Gen.12. 4.

9 Fedez egon cedin promettatu içan çayón lurrean bercerenean beçala, tabernacletã egoiten cela Iſaac-equin eta Iacob-equin promes beraren herederoquidequin.

10 Ecen ciuitate fundament-dunaren beguira cegoen, ceinen eguilea eta fundaçalea baita Iaincoa.

11 Fedez * Sarac-ere haciaren cõcebitzeco indarra recebi ceçan, eta adinetic lekora erdi cedin, ceren eſtima baitzeçan hari promes eguin ceraucana fidel cela.

Gen.17.19. eta 21.2.

12 Eta halacotz batetaric (etare ia hilaganic) ſorthu içan da *gende handi* ceruco içarrac beçala, eta itſas coſtaco conta ecin daiten ſablea beçala.

13 Fedean hauc gucioc hil içan dirade promeſſac recebitu gabe : baina vrrundanic hec ikuſſiric eta ſinhetſiric eta ſalutaturic, eta aithorturic ecen arrotz eta eſtrangér ciradela lurrean.

14 Ecen gauça hauc erraiten dituztenéc, claroqui eracuſten dute ecen *bere* herriaren ondoan dabiltzala.

15 Eta ſegur,baldin harçaz orhoit içan baliradé ceinetaric ilki içan baitziraden, itzultzeco

dembora baçuten:

16 Baina orain hobeagobat desiratzen duté, erran nahi baita celestiala: hunegatic Iaincoari berari-ere etzayó laido hayén Iainco deitzera, ecen preparatu cerauen ciuitatebat.

Gen.22.10 eccl.44.20. 17 * Fedez offrenda ceçan Abrahamec Isaac, enseyatu içan cenean, eta seme bakoitza offrēda ceçan, promessac recebitu vkan cituenac:

Gen.21.12 rom.9.7. 18 (Ceini erran içan baitzayón, *Isaactan deithuren çaic hacia)

19 Estimaturic ecen Iaincoac hiletaric-ere resuscita ahal leçaquela: nondic are hura cōformitatez recruba baitzeçan.

Gen.27.27 39. 20 Fedez, * ethorteco ciraden gaucéz benedica citzan Isaac-ec Iacob eta Esau.

Gen.48.13 Gen.47.30 21 Fedez, * Iacob-ec hiltzean Iosephen semetaric batbedera benedica ceçan: * eta adora ceçan *bere* makila buru gainean bermaturic.

Gen.50.24 22 Fedez, *Iosephec hiltzeā eguin ceçan mentione Israeleco haourrén ilkiteaz: eta bere heçurréz manamendu eman ceçan.

Exod 1.2. act.7.21. 23 Fedez, * Moyses sorthu içan cenean, gorde içan cen bere ahaidéz hirur hilebethez, ceren haour ederra baitzacussaten, eta ezpaitziraden beldur * Regueren ordenançaren.

Exod.1.16.

Exod.2.11. 24 Fedez, * Moysesec ia hāditurie refusa ceçan Pharaoren alabaren seme deithu içatera:

25 Hautatzenago çuela Iaincoaren populuarequin affligitu içatera, ecen ez dembora guti batetacotz bekatuzco atseguinén vkaitera:

26 Abrastassun handiago estimaturic Chri-

ſten iniuriá, ecen ez Egypten ciraden theſaurac, ecen recompenſara beha cegoen.
27 Fedez vtzi ceçan Egypte, Regueren hiraren beldurric gabe: ecen inuiſible dena ikuſten balu beçala, fermu eduqui ceçan.
28 Fedez *eguin citzan Bazcoa eta odol iſſurtzea: lehen ſorthuac deſeguiten cituenac, hec hunqui ezlitzançát. *Exo.12.28*
29 Fedez iragan ceçaten itſas gorria leyhorrez beçala: cein gauça enſeyaturic, Egyptianoac hundatu içan baitziraden. *Exo.14.22*
30 Fedez *Ierichoco murruac eror citecẽ, çazpi egunez inguratuac egonic. *Iof.6.20.*
31 Fedez, *Rahab paillardá etzedin gal incredulequin batean, *eſpiác baquerequin *oſtatuz* recebitu vkan cituenean. *Iof.6.23.* *Iof.2.1.*
32 Eta cer erranen dut guehiago? ecen dembora faltaturen çait, contatu nahi badut *Gedeonez, eta *Barac-ez, eta *Samſonez, eta *Iephthez, eta *Dauid-ez, eta Samuelez, eta Prophetez: *Iug.6.11.* *Iug.4.6.* *Iug.13.24.* *Iug.11.1. eta 12.7.* *1.Sam.13.14.*
33 Ceinéc fedez combatitu vkan baitituzte reſumác, *fedez* eguin vkan duté iuſtitia obtenitu vkan dituzte promeſſac, boçatu lehoinén ahoac,
34 Iraungui ſuaren indarra, itzuri içan çaizte ezpata ahoey, ſendo eguin içan dirade erietaric, borthitz eguin içan dirade guerlán, eſtrangerén campoac iheſſitan irion dituzté,
35 Emaztéc recebitu vkan dituzte reſurrectionez bere hilac: eta batzu hedatu içã dirade, de-

liuratu içatera conturic eguiten etzutelaric reſurrectione hobebat obteni leçatençát.

36 Eta berceac phorogatu içan diradeeſcarnioz eta vkaldiz, bayeta guehiago eſtecaduraz eta preſoindeguiz:

37 Lapidatu içan dirade, ſegatu içan dirade, tẽtatu içan dirade, ezpata herioz hil içan dirade: hara huna ebili içã dirade ardi eta ahunz larruz veztituric, abandõnaturic, affligituric, tormentaturic.

38 *Eta* ezpaitzén mundua hayén digne: deſertuetan errebelatuac çabiltzala eta mendietan eta lecetan eta lur çulhoetan.

39 Eta hauc guciéc fedez teſtimoniage obtenituric, eztuté recebitu vkan promeſſa:

40 Iaincoac cerbait hoberic guretaco probedituric, gu gabe perfectionetara ethor ezlitecençát.

## CAP. XII.

*1 Afflictione ſuffritzera exhortatzen. 2 Chriſt fedearen capitaina. 9 Spirituén Aita. 14 Baquea. 22. Iaincoaren ciuitatea. 24 Ieſus ararteco. 28 Reuerentia eta beldurra.*

*Rom.6.4. coloſ.3.8. eph.4.22. 1.pier.2.1.*

1 * GV-ere bada, hain teſtimoniozco hodey handiac ingura tzẽ gaituenaz gueroz, carga gucia, eta gu errachqui trabatzen gaituen bekatua egotziric, conſtantqui garreitzan propoſatu içan çaicun laſterrari:

2 Beha gaudelaric fedearen capitainagana eta

compliçaleagana, Iesusgana:ceinec escutan çuẽ bozcarioaren orde suffritu vkan baitu crutzea, ahalquea menospreciaturic, eta Iaincoarẽ thronoaren escuinean iarri içan da.

3 Considera eçaçue bada diligentqui nor den halaco contradictionea bere buruären contra bekatoretaric suffritu vkan duena, *çuen* gogoetan faltaturic akit etzaiteztençat.

4 Oraino eztuçue odolerano resistitu vkan, bekatuaren contra combatitzen çaretela:

5 Eta ahãci çaiçue exhortationea, ceinec çuey haourrey beçala erraiten baitrauçue, * Ene haourrá, ezteçála menosprecia Iaunaren gaztiguä, eta eztaquiála gogoa falta harçaz corregitzen aicenean.

*Pro. 3.11. apoc. 3. 19.*

6 Ecen maite duena Iaunac gaztigatzen dic, eta recebitzen duen haour gucia cehatzen dic.

7 Baldin gaztigamenduric suffritzen baduçue, Iaincoa *bere* haourrey anço presentatzen çaiçue: ecen cein da haourra aitác gaztigatzen eztuena?

8 Bada baldin gaztigamendu gabe baçarete, ceinetan participant baitirade guciac, beraz bastard çarete eta ez seme.

9 Eta gure gorputzén aitác gaztigari vkan ditugu, eta reuerẽtiatan eduqui ditugu: ezgaitzaitza spirituén Aitari vnguiz suietago içanen, eta vicico baicara?

10 Ecen hec egun gutitacotz, berey irudi çayẽ beçala, gaztigatzen guentuztén: baina hunec gure probetchutan, haren saindutassunean par-

ticipant garençát.

11 Bada gaztigu guciac ordu berean eztirudi bozcariotaco dela, aitzitic triſtitiataco : baina guero iuſtitiazco fructu baquezcoa rendatzen draue harçaz exercitatu dirateney.

12 Goititzaçue bada *çuen* eſcu lachoac, eta *çuen* belhaun iunctura partituac chuchent itzaçue:

13 Eta bideſca chuchenac eguin ietzeçue çuen oiney : maingu *den* gauçá bidetic aldara eztadinçát, bainaitzitic ſendo dadin.

*Ro.12.18.* 14 * Baqueari çarreitzate guciequin, eta ſaindutaſſunari, cein gabe nehorc ezpaitu Iauna ikuſſiren.

15 Gogoatzen duçuelaric nehor aldara eztadin Iaincoaren gratiatic : cembeit erro karmin goiti ialguiten denec trubla etzaitzatençát : eta anhitz harçaz ſatſu eztitecençát.

*Gen.25.33* 16 Eztén nehor paillard edo profano, * Eſau beçala, ceinec vianda batetan ſal baitzeçan bere lehen ſortzezco primeçá.

*Gen.27.38* 17*Ecē badaquiçue are guero heretatzeco benedictionea deſiratzē çuelaric, refuſatu içā dela: ecen etzeçā eridē penitentiataco lekuric, nigar vrirequin *benedictionearen* eſcatu içā bacen-ere.

*Exo.19.16. eta 20.21.* 18 Ecen etzarete ethorri * eſcuz hunqui ahal daitequeen mēdi batetara, ez erratzen den ſura, ez haice buhūbara, ez lāhora eta tempeſtatera,

19 Eta trompetta ſoinura eta hitzén vozera, cein ençun vkan çutenéc,* requeri baitzeçaten guehiagoric ezlaquién dreça hitza. *Exod.20. 19.*

20 (Ecen manatzen cena ecin ſuffri ceçaque-

ten,cein baitzen, * Baldin abre batec-ere men- *Exo.19.12*
dia hunqui badeça, lapidaturen da edo gueciaz
iraganen da.
21 Eta Moysesec (hambat cen terrible eracu-
sten cena) erran ceçan, Icitu naiz eta ikaratu)
22 Baina ethorri içan çarete Siongo mẽdira,e-
ta Iainco viciarẽ ciuitatera, Ierusalẽ celestialera,
eta Ainguerućn anhitz millataco compainiara,
23 Eta ceruëtan scribatuac diraden lehen sor-
thuén congregationera , eta gucién iuge den
Iaincoagana,eta iusto sanctificatuẽ spirituetara:
24 Eta Iesusgana alliança berrico Arartecoa-
gana,* eta Abelenac baino gauça hobeac errai- *Gen.4. 10.*
ten dituen odol issurira.
25 Beguirauçue refusa ezteçaçuen minço de-
na:ecen baldin itzuri içan ezpadirade Iaincoarẽ
icenean minço cena menospreciatzen çutenac
lurrean,gu anhitzez guehiago puniturẽ gara,
baldin ceruticminço denaganic erauz bagaitez.
26 Ceinen vozac orduan higui baitzeçan lur-
ra: baina orain denuntiatu vkan du,dioela, * O- *Agg.2.7.*
raino behin nic higuituren dut ez solament lur-
ra, baina ceruä-ere.
27 Eta *hitz* hunec Oraino behin, declaratzẽ du
fermu eztiradẽ gaucẽ, hala nola escuz eguin di-
radenẽ deseguitea:fermu diradenac daudecẽ çat.
28 Hunegatic higui ecin daitequeẽ resumá har-
tzẽ dugularic,daducagũ gratiá,ceinez hala cer-
bitza baiteçaquegu Iaincoa non harẽ gogaraco
baiquirate, reuerentiarequin eta beldurrequin.
29 Ecẽ* gure Iaincoa su cõsumitzen duẽ-bat da. *Deut.4.24*

CAP. XIII.

1 *Charitatea, Hoſpitalitatea.* 4 *Ezconçá.* 5 *Auáritia gaberico conditioneac.* 8 *Chriſt eternál.* 9 *Doctrina eſtrangerac.* 13 *Chriſtē ignominia.* 15 *Iaincoaren gogaraco ſacrificioac.* 18 *Orationea.* 20 *Chriſt paſtór.*

*Rom.12.10.*

1 * CHaritate fraternala egon bedi.

*Rom.12.13* *1.pier.4.9.* *Gen.18.3.* *eta 19.3.*

2 * Hoſpitalitatea eztaquiçuela ahanz : *ecen harçaz batzuc etzaquitelaric oſtatuz recebitu vkan dituzte Aingueruäc.

3 Çaretén orhoit preſonerez, hequin preſoner bacinete beçala : affligitzen diradenez, ceuroc-ere gorputzez *affligitzen* bacinete beçala.

4 Honorable *da* gucién artean ezconçá, eta ohe macula gabea : baina paillartac eta adulteroac iugeaturen ditu Iaincoac.

5 *Çuen* conditioneac bire auaritia gabe, *çareten* content preſentecoéz : ecen erran vkan du betac, * Ezaut vtziren, eta ezaut abandonnaturen.

*Ioſ.1.5.9.*

6 Hala non ſegurançarequin erran ahal baitęçaquegu, * Iauna ene aiutaçale, eznaiz beldur içanen guiçonac ahal daididan gauçaren.

*Pſal.118,6*

7 Çareten orhoit çuen guidaçaléz, Iaincoaren hitza declaratu vkan drauçuenéz, ceinén fedea imitatzen baituçue, conſideratzen duçuelaric ceric içan den hayén conuerſationearen fina.

8 Ieſus Chriſt atzo *içan dena* eta egun, hura bera *da* eternalqui-ere.

9 Doctrina diuerſez eta eſtrangerez etzaiteztela

tela hara huna erabil: ecen on da bihotza gratiaz confirma dadin, ez viandéz, *ceinétan* ezpaitute probetchuric vkan applicatu içan diradenéc.

10 Badugu aldarebat ceinetaric iateco çucenic ezpaitute Tabernaclea cerbitzatzen dutenéc.

11 * Ecen abrén gorputzac, ceinén odola ekarten baita bekatuagatic ſanctuariora Sacrificadore ſubiranoaz, erratzen dirade tendetaric lekora.

*Leui.14.11 eta 6,30. eta 16.27.*

12 Halacotz Ieſuſec-ere, ſanctifica leçançát populua bere-odolaz, ſuffritu vkan du portaleaz campotic.

13 Ilki gaitecen bada harengana tendetaric lekora haren ignominiá ekarten dugula.

14 * Ecen eztugu hemen ciuitate permanentic: baina ethorteco denaren ondoan gabiltza.

*Mich.2.10*

15 Harçaz bada offrenda dieçogun ardura Iaincoari, laudoriozco ſacrificio, erran nahi baita, * haren icena confeſſatzen duten ezpainén fructua.

*Oſe.14.3.*

16 Bada beneficentia eta communicationea eztaquizqui çuela ahanz: ecẽ halaco ſacrificioéz placer hartzen du Iaincoac.

17 Obeditzaçue çuen guidaçaleac, eta ſuſmetti çaquiztéz ecen hec veillatzen duté çuen arimacgatic, contu rendatu behar dutenec beçala: eguiten dutena alegueraqui eguin deçatençat, eta ez gogoz garaitic: ecen hura ezliçateque çuen probetchutan.

18 Othoitz eguiçue guregatic: ecen aſſegura-

tzen gara conſcientia ona dugula, deſiratzẽ dugularic gauça gucietan honeſtqui conuerſatzera.

19 Eta hambatez guehiago othoitz eguiten drauçuet haur daguiçuen, ſarriago reſtitui naquiçuençát.

20 Iainco baquezcoac bada (ceinec hiletaric itzul eraci baitu ardién Artzain handia alliança eternalezco odolaz, Ieſus Chriſt gure Iauna)

21 Confirma çaitzatela obra on orotan, bere vorondatearen eguitera, eguiten duelaric çuetan haren aitzinean placent datenic, Ieſus Chriſtez, ceini gloria ſecula ſeculacotz. Amen.

22 Halaber othoitz eguiten drauçuet, anayeác, ſuffri eçaçue exhortationetaco hitza: ecen hitz gutitan ſcribatu drauçuet.

23 Iaquiçue *gure* anaye Timotheo largatu içan dela, ceinequin (baldin ſarri badator) ikuſſiren baitzaituztet.

24 Salutaitzaçue çuen guidaçale guciac, eta ſaindu guciac. Salutatzen çaituztéz Italiacoec.

25 Gratia *dela* çuequin gucioquin. Amen.

*Hebraicoetara ſcribatu içan da Italiaric Timotheorequin.*

# S. IACQVES APOSTOLVAREN EPISTOLA CATHOLICOA.

CAP. I.

2 *Tentationea.* 3 *Patientiá.* 5 *Sapientiá.* 8 *Gogo doblea.* 12 *Vicitzeco coroá.* 14 *Guthiciá.* 18 *Hitzaz engendratu içan gara.* 20 *Iaincoaren iustitiá.* 22 *Leguearen ençuleac.* 26 *Mihiaren bridatzea.* 27 *Religione eguiazcoa.*

1 IACQVES Iaincoaren eta Iesus Christ Iaunaren cerbitzariac, hamabi leinu barreyatuey, salutatione.

2 Ene anayeác, bozcario perfectotan educaçue tentatione diuersetara eror çaiteztenean:

3 *Daquiçuelaric ecen çuen fedearen phorogançác patientia engendratzen duela. *Rom. 5. 3.*

4 Baina patientiác obra perfectoa biu, perfect eta integro çaretēçat, deusen falta etzáretelaric.

5 Eta baldin çuetaric cembeitec sapientia faltaric badu, esca bequió Iaincoari, ceinec emaiten baitraue guciey benignoqui, eta ez reprotchatzen: eta emanen çayó.

6 *Baina federequin esca bedi, batre dudatzen eztuela: ecen dudatzen duena, haiceaz erabilten eta tormentatzen den itsas bagaren pare da. *Mat. 7. 7. marc, 11. 24. luc, 11. 9. ioan. 14. 13 eta 16. 23.*

7 Ezteçala bada estima guiçon harc deus Iaunaganic recebituren duela:

8 Guiçon gogo doblatacoa, inconstant da bere bide gucietan.

9 Gloria bedi bada anaye conditione bachotacoa bere gorataſſunean:

10 Baina abrats deña, *gloria bedi* bere bachotaſſunean:* ecen belhar lilia beçala iraganen da.

Esa.40.6. eccl.14.18. 1.pier.1.24

11 Ecen *nola* iguzquia beroarequin goratu eta, erre baita belharra, eta haren lilia erori, eta haren irudi ederra galdu: hala abratſa-ere bere bide gucietan chimalduren da.

Iob,5.17.

12 * Dahatſu *da* tentatione ſuffritzen duẽ guiçona: ecen phorogatu datenean recebiturẽ duque, Iaunac hura maite duteney promettatu drauen vicitzeco coroá.

13 Nehorc, tentatzen denean, ezterrala Iaincoaz tentatzen dela: ecen Iaincoa ecin tẽta daite gaizquiz, eta nehor eztu tentatzen.

14 Baina batbedera tentatzen da bere guthicia propriaz tiratzen eta bazcatzen denean.

15 Guero guthiciá, concebitu duenean, ertzen da bekatuz: eta bekatuac acabatu denean, herio engendratzen du.

16 Etzaiteztela abuſa, ene anaye maiteác.

17 Donatione on oro, eta dohain perfect oro garaitic da arguién Aitaganic iauſten dela, cein baithan ezpaita cambiamenduric, ez aldizcazco itzalic.

18 *Harc* bere vorondatez engendratu vkan gaitu eguiazco hitzaz, haren creaturetaco primitiác beçala guinençát.

Pro,17.27.

19 Halacotz, ene anaye máiteác, * biz guiçon

gucia ençutera lehiati, berantcor minçatzera, eta berantcor asserretzera.

20 Ecen guiçonaren asserreac Iaincoaren iustitiá eztu complitzen.

21 Halacotz, iraitziric cithalqueria gucia eta malitiázco superfluitatea, emetassunequin recebi eçaçue,*çuetan* landatu hitza,ceinec salua ahal baititzaque çuen arimác.

22 *Eta çareten hitzaren eguile eta ez solament ençule, ceuron buruäc enganatzen dituçuela. *Mat.7.21. rom.2.13.*

23 Ecen baldin norbeit hitzaren ençule bada eta ez eguile, hura mirailean bere beguitharte naturala consideratzen duen guiçonaren pare da.

24 Ecen consideratu vkan dú bere buruä, eta ioan içan da,eta bertan ahãce çayó nolaco cen.

25 Baina miratu datena Legue perfectoan,*cein baita* libertatezcoa, eta hartan perseueratu duqueena, ceren ezpaitate ençule ahanzcor içan, baina obraren eguile:hura dohatsu içanen da bere eguinean.

26 Baldin cembeitec vste badu religioso dela çuen artean, bridatzen eztuelaric bere mihia, baina bere bihotza enganatzen duelaric, halacoaren religionea vano da.

27 Religione pura eta macula gabea Iainco eta Aita baithan,haur da, çurtzén eta *emazte* alhargunén visitatzea bere tribulationetan: eta macula gabe bere buruären beguiratzea mundu hunetaric.

CAP. II.

*2, 9 Acceptione persónéz eguitea. 8 Leguearen complitzea. 13 Misericordia gaberico condemnationea. 14 Fedea obrác gabe ez deus. 17, 20 26. Hila.*

1 ENe anayeác, eztuçuela Iesus Christ gure Iaun gloriazcoaren fedea, *persónén acceptionerequin.

*Leui.19.15 deut.1.17. eta,16.19. pro 24.23. eccl.42.1.*

2 Ecen baldin sar badadi çuen congregationera guiçon-bat vrrhezco erhaztun-bat duela, preciosqui veztituric: eta sar dadin halaber edocein paubre charqui veztituric,

3 Eta ikartze duçuen preciosqui veztitua denagana, eta erran dieçoçuen hari, Hi iar adi hemen honestqui: eta paubreari derroçuen, Hi ago çutic han, edo iar adi hemen ene scabella azpian:

4 Eztuçue differentia eguin vkan ceuroc baithan, eta eguin içan baitzarete pensamendu gaichtoezco iuge?

5 Ençuçue, ene anaye maiteác, eztitu Iaincoac elegitu mundu hunetaco paubreac fedez abrats *içateco*, eta hura maite duteney promettatu drauen resumaco heredero?

6 Baina çuec desohoratu vkan duçue paubrea. Ala abratsec etzaituztez tyrannizatzen, eta etzaituztez gortetara erekarten?

7 Eztute hec blasphematzen çuen gainean inuocatu içan den Icen ona?

8 Badaric-ere baldin Legue reala complitzen baduçue Scripturaren araura, *cein baita,** On e-ritziren draucac eure hurcoari eure buruäri be-çala, vngui eguiten duçue:

Leuit.9.19 mat.22.39 marc,12.31. rom.13.9. gal.5.14.

9 Baina baldin perſonén acceptioneric badu-çue, bekatu eguiten duçue, eta reprehenditzen çarete Legueaz tranſgrediçale beçala.

10 Ecen norc-ere Legue gucia beguiraturen baitu, eta *punctu* batetan faltaturen, gucietan hoguendun da.

11 Ecen erran duenac, Eztuc adulteraturen, erran du halaber, Eztuc hilen. Bada baldin adulteratzen ezpaduc, baina hiltzen bay, Legueareu tranſgrediçale eguin aiz.

12 Hala minça çaitezte eta hala eguiçue nola libertatezco Legueaz iugeatu behar diradenéc.

13 Ecen condemnatione miſericordia gabe eguinen çayó miſericordia eguin eztuqueenari: eta gloriatzen da miſericordia condemnationearen contra.

14 Ene anayeác, cer probetchu, baldin norbeitec badarra fede baduela, eta obrác eztituén? ala fede harc hura ſalua ahal deçaque?

15 Eta baldin anayea edo arrebá * billuciac badirade, eta peitu eguneco vitançaren:

Luc,3.1. 1.ioan.3.17.

16 Eta çuetaric cembeitec hæy erran diecén, Çoazte baquerequin, bero çaitezte eta aſſe çaitezte: eta eztinguzteçuen gorputzaren neceſſario diraden gauçác, cer probetchu duqueite?

17 Hala fedea-ere, baldin obrác ezpaditu, hila

da bere berez.

18 Baina are erranén du edoceinec, Hic fedea duc, eta nic obrác citiat, eracuts ieçadac eure fedea eure obrác gabe, eta nic eracutſiren drauat hiri neure obretaric neure fedea.

19 Hic ſinheſten duc ecen Iaincobat dela: vngui eguiten duc: deabruec-ere ſinheſten dié, eta ikara diabiltzac.

20 Baina nahi duc iaquin, o guiçon vanoá, ecen fedea obrác gabe hila dela?

21 Gure aita Abraham ezta obretaric iuſtificatu içan, *Iſaac bere ſemea aldare gainean offrendatu çuenean?

*Gen 21.10*

22 Badacuſſac nola fedeac obratzē çuen haren obretan, eta obretaric fedea acabatu içan dela?

23 Eta complitu içan dela Scripturá dioela, * Sinhetſi vkan du Abrahamec Iaincoa, eta imputatu içan çayó iuſtitiatara, eta Iaincoaren adiſquide deithu içan da.

*Gen.15.16. rom.4.3. gal.3.6.*

24 Badacuſſaçue bada ecen obretaric iuſtificatzen dela guiçona, eta ez fedetic ſolament?

25 Halaber* Rahab paillarda-ere ala ezta obretaric iuſtificatu içan, recebitu cituenean mandatariac, eta berce bidez idoqui cituenean?

*Iosue,2.1.*

26 Ecen nola gorputza ſpiritu gabe hila baita, hala fedea-ere obrác gabe hila da.

## CAP. III.

*3 Mihiaren deſcriptionea. 13 Conuerſatione ona. 14 Inuidia eta tharritamendua. 15 Lurreco ſapientiá eta garaicoa. 18 Iuſtitiazco fructua.*

1 ENe anayeác, etzaretela magiſtru anhitz: daquigularic ecen condemnatione hãdiagoa recebituren dugula.
2 Ecen anhitz gauçatan huts eguiten dugu guciéc *Baldin cembeitec hitzean huts eguiten ezpadu, hura guiçon perfectoa da, eta bridatan eduqui ahal deçaque gorputz gucia-ere.

*Eccl.14.1, eta 19.16, eta 25.11.*

3 Huná, çamariey bridác ahoetara emaiten drauztegu obedi gaitzatençát, eta hayén gorputz gucia hara huna drabilagu:
4 Huná, barcác-ere, hain handi diradelaric, eta haice borthitzéz erabilten diradelaric, hara huna erabilten dirade gobernail chipito batez, norat-ere gobernaçaleare͂ placerac nahi baituque.
5 Hala mihia-ere membro tipitobat da, eta gauça handiz vantatzen da: huná, ſu chipito batec cein egurtze handia irachequiten duen.
6 Mihia-ere ſubat *da*, eta iniquitatezco mundubat: hala *diot* mihia eçarria dela gure me͂broén artean, ceinec maculatzen baitu gorputz gucia, eta irachequiten gure naturaren curſua, eta irachequia da gehennáz.
7 Ecen beſtién, eta chorién, eta ſuguén, eta itſaſſoco arrainén natura gucia hetzen da, eta heci içan da natura humanoaz:
8 Baina mihia eceinere guiçonec ecin hez deçaque: ceba ecin daite͂ gaitzbat *da* poçoin mortalez bethea.
9 Harçaz benedicatzen dugu *gure* Iainco eta

Aita: eta harçaz maradicatzen ditugu Iaincoaren irudira eguinico guiçonac.
10 Aho ber-batetaric ilkiten da benedictione eta maledictione: Ezta behar, ene anayeác, hauc hunela eguin ditecen.
11 Ala ithurri batec çulho beretic emaiten du dulcea eta mina?
12 Ala ficotze batec oliuaric ekar ahal deçaque, edo aihenac ficoric? hala ecin ekar deçaque ithurri batec-ere vr gaci eta gueça.
13 Nor *da* çuhur eta iaquinſu çuen artean? eracuts bitza conuerſatione onez bere obrác, çuhurtziazco emetaſſunequin.
14 Eta baldin inuidia ſaminic baduçue, eta tharritamenduric çuen bihotzetan, etzaiteztela gloria, eta gueçurric ezterraçuela eguiarẽ cõtra.
15 *Ecen* çuhurtzia haur ezta garaitic iauſten dena, baina *da* lurrecoa, ſenſuala eta deabruezcoa.
16 Ecen non *baita* inuidiaric eta tharritamenduric, han nahaſtecamendu eta obra gaichto gucia.
17 Baina garaitico çuhurtziá, lehenic da pur, guero baquezco, moderatu, maneioſo, miſericordiaz eta fructu onez bethea, diſtinctioneric gabea, hypocriſia gabea.
18 Eta iuſtitiazco fructua baquerequin ereiten çaye baquezcoéy.

*1 Guerlác. 2 Guthiciác. 4 Munduco adiſquidetaſſuna. 6 Iaincoac reſiſtitzen vrgulutſuéy. 10 Humilitatea. 11 Gaitzerraileac. 12 Legue eçarlebat. 16 Vantatzea ez on.*

1 NOndic guerlác eta guduac çuen artean? eza hemẽdic, *diot*, çuen voluptate çuen mẽbroetan guerla eguiten dutenetaric?

2 Deſiratzen duçue eta eztuçue vkaiten, inuidioſo çarete eta bekaitz, eta ecin ardiets deçaqueçue: combatitzen çarete eta guerla eguiten duçue, baina eztuçue *deſiratzen duçuena*, ceren ezpaitzarete eſcatzen.

3 Eſcatzen çarete eta eztuçue recebitzen: ceren gaizqui eſcatzon baitzarete, çuen voluptatetan deſpenda deçaçuençát.

4 Adulteroác eta adulterác, eztaquiçue ecen munduaren adiſquidetaſſuna, Iaincoaren etſaytaſſun dela? nor-ere bada nahi içanẽ baita munduarequin adiſquide, Iaincoaren etſay iart enda.

5 Ala vſte duçue ecen Scripturác alferretan erraiten duela, Inuidiatara aurthiten du çuetan habitatzen den ſpirituac?

6 Aitzitic du gratia handiagoa emaiten, halacotz dio, *Iaincoac vrgulutſuey reſiſtitzẽ draue, eta humiley gratia emaiten. Prou. 3. 34 1. pier. 5. 5.

7 *Çareten bada ſuiet Iaincoaren, reſiſti ieçoçue deabruari, eta ihes eguinen du çuetaric. Epheſ. 4. 27

8 Hurbil çaquitzate Iaincoari, eta hurbilduren çaiçue: garbitzaçue eſcuac, o bekatoreác, eta purificaitzaçue bihotzac, o gogo doblatacoác.

9 Affligi çaitezte eta eguiçue lamentatione eta nigar: çuen irria nigarretara conuerti bedi, eta *çuen* alegrançá triſtitiatara.

1.Pier.5.6 10 *Humilia çaitezte Iaunaren aitzinean, eta goraturen çaituzté.

11 Elkarren cõtra etzaiteztela gaizqui minça, anayeác: anayearen contra minço denac, eta bere anayea condemnatzen duenac, Leguearen contra gaizqui erraiten du, eta Leguea condemnatzen du: eta baldin Leguea cõdemnatzen baduc, ezaiz Leguearen eguile, baina iuge.

12 Legue eçarlea bat da ſalua eta gal ahal deçaquena: *hi nor aiz bercea iugeatzen duana?

Rom.14.4.

13 Eya orain erraiten duçuenác, Egun edo bihar ioanen gara hiri batetara, eta egonen gara han vrthebat, eta merkatalgoa eguinen dugu, eta irabaciren dugu:

14 Eztaquiçuelaric biharamunean cer *içanen den*: ecen cer da çuen vicia? ecen appur batetacotz aguertzen eta guero deſeguiten den vaporebat da.

Act.18.21 15 Erran behar cindutenaren lekuan, *Baldin Iaunac nahi badu, eta vici bagara, eguinen dugu haur edo hura.

1.cor.4.19.

16 Baina orain gloriatzen çarete çuen vanterietan: horlaco gloriatze gucia gaichto da.

17 Bada vngui eguiten daquianac eta ez eguiten, bekatu eguiten du.

## CAP. V.

*1 Abratſac aduertitzen cer eguiteco dutén. 7 Patientiá. 10 Exemplu Prophetetan hartzeco. 12 Ezinratzeco. 13 Orationea. 14 Eriéz. 16 Elkarganaco reconciliationea.*

1 EYa orain abratſác, nigar eguiçue, vrhubi eguiten duçuela çuen miſeria heldurē çaizquiçuenacgatic.
2 Çuen abraſtaſſunac vſteldu dirade, çuē abillamēduac cerrenez betheac dirade.
3 Çuen vrrhea eta *çuen* cilharra herdoildu da, eta hayén herdoildurác teſtificaturen du çuen contra, eta *harc* ditu ianen çuen haraguiac ſuac beçala: theſaurizatu duçue azquen egunetaco.
4 Huná, çuen landác errequeitatu dituzten languilén alocairu çueçaz defraudatu içan dena, oihuz dago, eta errequeitaçalén oihuac armadén Iaunaren beharrietan ſarthu dirade.
5 Deliciotan vici içan çarete lurraren gainean, eta çuen atſeguinac hartu vkā dituçue, *eta* çuen bihotzac reſſaſiatu vkan dituçue ſacrificiotaco egunean beçala.
6 Condemnatu *eta* hil vkan duçue iuſtoa: eta eztrauçue reſiſtitzen.
7 Çareten bada patient, anayeác, Iaunaren aduenimendurano. Huná, laboraria lurreco fructu precioſoaren beguira egoiten da, patientqui haren beguira dagoela goiceco eta arratſeco vria recebi deçaqueno.
8 Çareten patient çuec-ere *eta* confirmaitza-

çue çuen bihotzac: ecen Iaunaren aduenimendua hurbil da.

9 Etzaiteztela arrangura elkarren contra, anayeác, condemna etzaiteztençát: huná, iugea borthaitzinean dago.

10 Ene anayeác, har-itzaçue afflictionetaco eta patientiataco exemplutan Prophetác, cein minçatu baitirade Iaunaren icenean.

11 Huná, dohatsu eduquiten ditugu *affliction* suffritzen dutenac: Iob-en patientiá ençun vkan duçue, eta Iaunaren fina ikussi duçue, nola guciz misericordioso den Iauna eta gogabera.

*Matt. 5.34* 12 *Bada gauça ororen aitzinetic, ene anayeác, iura ezteçaçuela ez ceruäz, ez lurraz, ez edocein berce iuramenduz: baina biz çuen baya, Bay: eta çuen eza, Ez: condemnationetara eror etzaiteztençát.

13 Affligitzen da cembeit çuen artean? othoitz begui: bihotz alegueratao da cembeit? canta beça.

14 Eri da cembeit çuen artean? erekar bitza Eliçaco ancianoac, eta othoitz beguité harengatic, *vnctatzen dutela hura olioz Iaunaren icenean. *Marc 6.13*

15 Eta fedezco orationeac saluaturen du eria, eta eraiquiren du hura Iaunac: eta baldin bekaturic eguin badu barkaturen çaizquió.

16 Confessa ietzoçue batac berceari çuen faltác, eta othoitz eguiçue batac berceagatic, senda çaiteztençát: *ecen* anhitz balio du iustoaren efficaciorequin *den* orationeac.

17 *Elias cen gu bay paſſionén ſuiectionetaco guiçona, eta othoiztez othoitz eguin ceçan, ez-laguian vriric, eta etzeçan eguin vriric lurraren gainean hirur vrthez eta ſey hilebethez.

*1.Reg 17.9 eta 18.45. luc 4.25.*

18 Eta berriz othoitz eguin ceçan, eta ceruäc vri eman ceçan, eta lurrac bere fructua ekar ceçan.

19 Anayeác, *baldin çuetaric cembeit eguia-tic errebela badadi, eta hura conuerti badeça cembeitec,

*Mat.18.15*

20 Iaquin beça ecen conuerti eraci duqueenac bekatorebat bere bideco errebelamẽdutic, ſal-uaturen duqueela arimabat heriotaric, eta be-katu mulçoa eſtaliren duqueela.

# S. PIERRIS APOSTOLVAREN LEHEN

## Epistola catholicoa.

### CAP. I.

*2 Iaincoaren electionea. 3 Haren misericordiá. 4 Heretage incorruptiblea. 5 Saluamendua. 6 Bozcarioa. 7 Fedearen phorogança eta fina. 10 Prophetác. 12 Euangelioa. 14 Obedientiá. 15 Conuersatione saindua. 17 Personén acceptioneric ez Iaincoac. 19 Christen odola, 20 Mundua baino lehen ordenatu. 21 Iaincoa baithango fedea eta sperançá. 22 Charitate anayetassunezcoa. 25 Iaunaren hitz vicia.*

1 PIERRISEC, Iesus Christen Apostoluac, Põten, Galatian, Cappadocian, Asiá, eta Bithinian gaindi barreyatuac çareten estrangerey.

2 Iainco Aitaren prouidentiaren arauez Spirituaren sanctificationetan elegituey, obeditzeco eta Iesus Christen odolaz ihiztatu içateco: Gratia eta baque multiplica daquiçuela.

3 Laudatu *dela* Iaincoa *cein baita* Iesus Christ gure Iaunaren Aita, ceinec bere misericordia handiaz regeneratu vkan baiquaitu sperãça vicitara, Iesus Christẽ hiletaricọ resurrectioneaz,

4 He-

4 Heretage corrumpi ecin daitenera,ez macula,ez chimal,ceruëtan çuençát conſeruatúra,

5 Iaincoaren verthutean ſedez beguiratzẽ çaretenonçat, azquen demborán reuelatu içateco preſt den ſaluamendutacotz.

6 Cein gauçatan alegueratzẽ baitzarete,dembora appurbat orain (baldin behar bada) triſtetuac çaretelaric tentatione diuerſetan:

7 Çuen ſedearen phorogançá vnguiz precioſoagoa ecen ez vrrhearena (cein galtzen baita eta halere ſuz phorogatzen) eriden dadinçát, *çuen* laudoriotan eta gloriatã eta ohoretan *dela*, Ieſus Chriſt aguer dadinean:

8 Cein ikuſſi eztuçuelaric maite baituçue: ceinetán orain ikuſtẽ eztuçuelaric, baina ſinheſten duçuelaric,alegrãça erran ecin daitenez eta glorioſoz alegueratzen baitzarete.

9 Eramaiten duçuelaric çuen ſedearen fina, *cein baita*,arimén ſaluamendua.

10 Saluamendu hunez informatu içan dirade, eta *haur* diligentqui bilhatu vkan duté, çuetara *ethorteco cen* gratiaz prophetizatu vkan duten Prophetéc.

11 Informatzen ciradelaric noizco edo cer demborataco Chriſtẽ Spiritu prophetiazco hetan cenac declaratzen cituen Chriſti *ethorteco çaizcan* ſuffrançác eta hayén ondoco gloriác:

12 Eta reuelatu içan çaye, ez bere buruey, baina guri adminiſtratzen cerauzquigutela orain çuey denuntiatu içan çaizqui çuen gauçác çuey Euangelioa predicatu drauçueçatenez, cerutic

igorririco Spiritu sainduaz, cein gaucén cõtemplatzeco desira baitute Ainguerués.

Luc 12.35. 13 *Halacotz çuen adimenduco guerruncea guerricaturic, sobrietaterequin, auçue perfectoqui sperança çuey presentatzen çaiçuen gratián Iesus Christ aguer daiteno.

14 Eta *haur*, haour obediētéc beçala, çuen buruäc cõformatzen eztituçuelaric lehenago çuē ignorantián *centuzten* desiretara:

Luc 1.75. 15 *Baina çuec deithu çaituztena saindu den beçala, çuec-ere çareten saindu *çuen* conuersatione orotan.

Leui. 11.44 eta 19. 2. eta 20.7. 16 Halacotz da scribatua, *Çaretē saindu: ecen ni saindu naiz.

17 Eta baldin Aitatan inuocatzen baduçue, *persónén acceptioneric gabe batbederaren obraren arauez iugeatzen duena, beldurrequin conuersa çaitezte çuen egoitza hunetaco demborán.

Deu. 10.17 rom. 2.11. gal. 2.6.

18 Daquiçuelaric ecen redemitu içan çaretela çuen conuersatione vano aitén ordenancetaric hartutic: ez gauça corruptiblez, nola baita, cilharrez edo vrrhez:

1. Cor. 6.20 eta 7.23. heb. 9.14. 19 *Baina Christen odol preciosoaz, bildots macula eta satsutassun gabe batenaz beçala:

1. ioan 1.7. apoc. 1. 5. 20* Ia mũduaren fundationea baino lehen ordenatuarenaz, baina azquen dembora hautan manifestatuarenaz, çuengatic,

Rom. 16. 25. ephes. 3.9. coloss. 1.26. 2 tim. 1.9. tit. 1.2.

21 Eta harçaz sinhesten duçue hura hiletaric resuscitatu duen eta hari gloria eman draucan Iaincoa baithan, çuen fedea eta sperançá Iain-

coa baithan licençat.

22 *Bada* çuen arimác purificatu içanic, obeditzen duçuela eguia Spirituaz, *anayetaſſunezco charitate fictione gabecorequin, bihotz chahuz elkarri on eritzoçue affectionatuqui:

*Berr.2.17. rom.12.10. ephes.4.3.*

23 Regeneraturic ez haci corruptibleaz, baina incorruptibleaz, Iaincoarẽ hitz viciaz, eta eternalqui egoiten denaz.

24 *Cerẽ haragui gucia *baita* belharra beçala, eta guiçonaren gloria gucia belhar lilia beçala: eyhartu da belharra, eta haren lilia erori:

*Eſa.40.6. eccl.14,18. iacq.1.10.*

25 Baina Iaunaren hitza badago eternalqui: eta haur da çuey euangelizatu içan çaiçuen hitza.

CAP. II.

2 *Adimenduzco eznea.* 4, 6 *Chriſt harri vicia.* 5 *Sacrificio ſpiritualac.* 8 *Behaztopamendutaco harria.* 9 *Sacrificadoregoa reala.* 11 *Haraguiaren guthiciác.* 12 *Conuerſatione honeſta.* 13 *Magiſtratuey obedientia ekarteco.* 16 *Libertatea.* 18 *Cerbitzarién eguimbidea.* 20 *Afflictionéz.* 21 *Chriſt gure exemplu.* 24 *Chriſtec gure bekatuac egari.* 25 *Arimén Artzaina eta Ipizpicua Chriſt.*

1 *BEraz vtziric malitia gucia, eta enganio guciá, eta hypocriſiác, eta inuidiác, eta gaitzerraite guciac,

*Rom.6.4. ephes.4,22. coloſſ.3.8. heb.12.1.*

2 Deſira eçaçue, haour heuraguiric eztuela ſorthuen ançora, adimenduzco eta enganio gabeco eznea, harçaz haz çaiteztẽçát.

3 Baldin daſtatu baduçue ecen benigno dela Iauna.

4 Harengana hurbiltzen çaretelaric cein baita

harri vicia, guiçonéz arbuyatua, baina Iaincoa baithan elegitua eta precioſoa.

5 Çuec-ere harri vici anço edifica çaitezte, etche ſpiritual, * Sacrificadoregoa ſaindu, Ieſus Chriſtez Iaincoaré gogaraco ſacrificio ſpiritual offrendatzeco.

Apoc.1.6.

6 Halacotz cõtenitzen-ere da Scripturán, *Huná, eçarten dut Sionen, har cantoin principala, elegitua *eta* precioſoa: eta hartan ſinheſten duena ezta confus içanen.

Eſa.28.16. rom.9.33.

7 Hurá da bada ohore çuen ſinheſten duçuenón: baina ſinheſten eztutenen, harri edificaçaléc arbuyatu vkan dutena cantoineco principal eguin içan da, eta behaztopamendutaco harri, *eta trebucamendutaco harri.

Pſal.118.22. mat.21.42 act.4.11.

8 Cein trebucatzen baitirade hitzaren contra *deſobedient diradelaric: hartaco ordenatu-ere dirade.

Exo.8.14. rom.9.33.

9 *Baina çuec *çarete* generatione elegitua, Sacrificadoregoa reala, gende ſaindua, populu acquiſitua: ilhumbetic bere miragarrizco arguira deithu vkan çaituztenaren verthuteac denuntia ditzaçuençát.

Exo.19.6. apoc.5.10.

10 *Noizpait cinetenac ez populu, orain *çarete* Iaincoaren populu: çuec miſericordia obtenitu etzẽdutenóc, orain miſericordia obtenitu vkan duçue.

Oſe.2.23. rom.9.25.

11 Maiteác, othoitz eguiten drauçuet, eſtrangeren eta bideazcoén ançora, *beguira çaitezten haraguiaren guthicietaric, ceinéc guerla eguiten baitute arimén contra:

Rom.13.14 gal.5.16.

12 Çuen conuersationea duçuelaric honest Gentillén artean çueçaz gaizquiguilez beçala minço diraden gaucetan, *ikussi dituqueizten obra onetaric glorifica deçatençát Iaincoa visitationeco eguncan.

Matt.5.16

13 *Çareten bada suiet gobernamendu humano guciaren Iaunagatic: edo regueren, superioraren beçala:

Rom.13.1.

14 Edo gobernadorén, harçaz igorri içan diradenén beçala, gaizquiguilén mendequiotan eta vnguiguilén laudoriotan.

15 Ecen hunela da Iaincoaren vorondatea, vngui eguitez, guiçon erhoén ignorantiari ahoa boça dieçoçuen:

16 Libertatetan çaretenéc beçala, eta ez libertatea malitiaren estalquitan bacendute beçala, aitzitic Iaincoarén cerbitzariéc beçala.

17 Guciac ohoraitzaçue: * anayetassunari on eritzoçue. Çareten Iaincoaren beldur. Regue ohora eçaçue.

Leben 1.22
rom.12.10.

18 *Cerbitzariác, çareten beldur gucirequin nabussién suiet, ez solamẽt onén eta humanoén, baina dorpén-ere.

Ephe.6 5.
coloss.3.22.
tit.2.9.

19 *Ecen haur da gogaraco, baldin norbeitec Iaincoaganaco cõscientiagatic fascheriaric suffritzen badu, iniustoqui suffritzen duelaric:

2.Cor.10.7

20 Ecen cer laudorio da, baldin falta eguinic buffetatzén çaretenean pairatzẽ baduçue? baina baldin vngui eguiten duçuelaric eta affligitzen çaretelaric pairatzẽ baduçue, haur da Iaincoaren gogaraco.

21 Ecen hunetacotzát deithu içan çarete: ecen Chriſtec-ere ſuffritu vkan du guregatic, guri exemplu vtziten draucula, haren oin hatzey iarreiqui çaquiztençat:

*Eſa.53.9. 1.ioan 3.5.*

22 *Ceinec ezpaitu bekaturic eguin vkan, eta eceinere enganioric ezta eridē içan harē ahoan.

23 Ceinec iniuriatzen cenean, ezpaitzuen iniuriatzen: gaizqui eguiten ceraucatenean, ezpaitzuen mehatchuric eguiten: baina remettitzen cen iuſtoqui iugeatzen duenagana.

*Eſa.53.4 matt.8.17.*

24 *Ceinec gure bekatuac ekarri vkan baititu bere gorputzean çur gainean: bekatuey hilic, iuſtitiari vici guiaizquionçat: ceinen vkalduráz ſendatu içan baitzarete.

25 Ecen ardi errebelatuac beçala cineten, baina orain conuertitu içan çarete çuen arimén Artzainagana eta Ipizpiçuagana.

## CAP. III.

1 *Emaztén eguimbidea.* 7 *Senharrena.* 8 *Guciac gogo batetaco içateco.* 9 *Mendequioari eta gaitzerraiteari ihes eguiteco.* 14 *Vngui eguiteagatic ſuffritzea.* 16 *Conſcientia ona.* 18 *Chriſt paſſionaturic,* 22 *Iaincoaren eſcuinean.*

*Coloſſ.3.18 ephes.5.22.*

1 HAlaber *emazteac ſuiet *diradē* bere ſenharrén, baldineta batzu hitzarē deſobedient badirade, emaztén conuerſationeaz hitza gabe irabaz ditecençat,

2 Ikuſſi duqueitenean çuen conuerſatione caſte beldurrequin dena:

3 *Ceinén ornamendua eztén lekoreco bilo içurduratan, edo vrrhezco paramendutan, edo abillamenduetaco habitutan: 1.Tim.2.9

4 Baina bihotzeco guiçon gordea, ſpiritu eme eta ſoſſegu batetaco incorruptioneã cõſiſtitzen dena, cein baita Iaincoaren aitzinean precioſo.

5 Ecen hunela lehenago emazte ſainda Iaincoa baithan ſperança çutenac-ere appaincen ciraden, ſuiet ciradelaric bere ſenharrén:

6 *Sarac Abraham obeditzen çuen beçala, hura iaun deitzen çuela, *ceinen alaba eguin içan baitzarete, vngui eguiten duçuela, eta eceinere iciapenen beldur etzaretela. Gen. 18.12 *ceinen, Sararen.

7 Senharrác, halaber conuerſa eçaçue hequin diſcretqui emaztezco vnci fragilagoarequin beçala, ohore emaitẽ draucaçuela, elkarrequin vicitzeco gratiarẽ heredero quide-ere çaretenoc beçala, çuen orationeac empatcha eztitecẽçát.

8 Eta finalqui guciac *çareten* conſentimendu batetaco eta compaſſione batetaco, fraternalqui onhetſle çaretelaric miſericordioſo, gratioſo:

9 *Gaitza gaitzagatic rendatzen eztuçuela edo iniuria iniuriagatic, baina contrariora, benedicatzen duçuela: daquiçuelaric ecen hartara deithuac çaretela, benedictionezco heretagea poſſedi deçaçuençát. Prou.17.11 eta 20. 22. matt.5.39. rom.12.17. 1.theſ.5.15

10 *Ecen nahi duenac onhetſi vicia, eta ikuſſi egũ onac, beguira beça bere mihia gaitzetaric, eta bere ezpainac enganioren pronuntiatzetic: Pſal 34.13

11 *Itzul bedi gaizquitic, eta begui vngui: bilha beça baquea, eta iarreiqui bequió hari. Eſa.1.16.

12 Ecen Iaunaren beguiac iuſtoén gainera *beha daude*, eta haren beharriac hayén othoitz etara, eta Iaunaren beguithartea *da* gaizquiac eguiten dituztenén gainean.

13 Eta nor da çuey calteric eguinen draucuena, baldin vnguiari baçarreitzate?

Matt.5.11 14 *Baina baldin cerbait ſuffritzen baduçue vngui eguinagatic, dohatſu *çarete*. Baina hayén beldurrez icit etzaiteztela, ezeta trubla:

15 Aitzitic Iainco Iauna ſanctifica eçaçue çuen bihotzetan: eta *çareten* bethi preſt ihardeſtera çuetan den ſperãçáz raçoin galde eguiten duen guciari, emetaſſunequin eta reuerentiarequin,

I.eben 2.12 16 *Conſcientia ona duçuelaric: çuen contra gaizquiguiléz beçala minço diraden gauçán, confus diradençat, çuen conuerſatione Chriſt baithango ona calumniatzen dutenac.

17 Ecen hobe *da* vngui eguiten duçuela affligi çaitezten, baldin Iaincoaren vorondateac hala nahi badu, ecen ez gaizqui eguiten duçuela.

Rom.5.6. heb.9.15. 18 *Ecen Chriſtec-ere behin bekatuagatic ſuffritu vkan du, iuſtoac iniuſtoacgatic: gu Iaincoagana eraman guençançát, haraguiz mortificaturic, baina viuificaturic Spirituaz.

19 Cein *Spirituz* carceleco ſpirituey-ere partituric predicatu vkan baitraue,

Gene.6.14. mat.24.38 luc 17.26. 20 Lehenago deſobedient ciradeney, *behin beha cegoenean Iaincoarẽ patiẽtiá Noerẽ egunetan, appaincen cenean arká: ceinetan gutiac, da iaquiteco, çortzi arima ſalua baitzitecẽ vrez:

21 Ceini orain ihardeſten draucan baptiſmoa-

ren figurác gu-ere ſaluatzen gaitu: ez haraguico ſatſutaſſunac chahutzen dituenac, baina conſcientiá onaren atteſtationeac Iaincoaren aitzinean Ieſus Chriſten reſurrectioneaz:

22 Cein baita Iaincoaren eſcuinean, cerurát ioanic, ceini ſuiet eguin baitzaitza Ainguerüäc, eta puiſſançac eta verthuteac.

## CAP. IIII.

*2 Iaincoaren vorondatearen araura vicitzeco. 6 Hiléy euangelizatu. 7 Veillatzeco eta othoitz eguiteco. 8 Charitate affectionezcoa. 9 Hoſpitalitatea. 10 Iaincoaren anhitz aldezco gratiá. 12 Phorogançá. 14 Gloriaren eta Iaincoaren Spiritua. 17 Iaincoaren etchea.*

1 BAda Chriſtec guregatic ſuffritu vkā duenaz gueroz haraguian, çuec-ere penſatze hunez beraz harma çaitezte, nola haraguian ſuffritu duena bekatutaric ceſſatu den,

2 Guehiagoric ez guiçonén guthicién araura, baina Iaincoaren vorondatearen araura goitico haraguian den demborán vici dençat.

3 *Ecen aſco içateco çaicu ceren *gure* vicico dembora iraganean Gentilén vorōdatea complitu dugun, conuerſatzen guen duenean inſolentiétan, guthiciétan, hordiqueriétan, gormandicétan, edatétan, eta idolatria abominablétan. Eph.4.23.

4 Halacotz bere buruäc eſtranger iruditzen çaizté diſſolutionezco inſolentia berera hequin laſter eguiten eztuçuenean, çuec gaitzerraiten

çaituztela.

5 Ceinéc contu rendaturen baitraucate vicién eta hilén iugeatzeco preſt dagoenari.

6 Ecen hunetacotz hiley-ere euágelizatu içan çaye: condemna litecençat guiçonén arauez, haraguiz: eta vici liraden Iaincoaren arauez ſpirituz.

7 Bada gauça gucién fina hurbiltzen da. Çareten beraz ſobre eta iratzarri othoitz eguitera:

8 Eta gauça gucién gainetic çuen artean charitate affectionezcoa duçuelaric: *ecen charitateac eſtaliren du bekatuén anhitztaſſuna.

Pro.10.12.

9 * Çareten elkarren oſtatuz recebiçale, murmurationeric gabe.

Ro.12.13. heb.13.2.

10 * Batbederac dohaina recebitu duenaren arauez bercey adminiſtra biecé, Iaincoaren anhitz aldezco gratiaren diſpenſaçale onéc beçala.

Rom.12.6. phil.2.14.

11 Baldin norbeit minço bada, *minça bedi* Iaincoaren hitzéz beçala: baldin norbeit adminiſtratzen ari bada, *adminiſtra beça* Iaincoac adminiſtratzen duen puiſſançaren araura: gauça gucietan glorifica dadinçat Iaincoa Ieſus Chriſtez, ceini gloria eta indar ſecula ſeculacotz. Amen.

12 Gucizco maiteác, ezteçaçuela eſtranio eriden, labean beçala çaretenean çuen phorogatzeagatic, cerbait gauça vſte gaberic ethorten balitzeiçue beçala:

13 Aitzitic Chriſten afflictionetan communi-

catzen duçuen becembateã, aleguera çaitezte: haren gloriaré reuelationean-ere, atſeguin hartzen duçuela aleguera çaiteztençát.

14 * Baldin Chriſten icenean iniuriatzen baçarete, dohatſu *çarete* ecen çuen gainean repoſatzen da gloriaren eta Iaincoaren Spiritua, heçaz den becembatean blaſphematzen dena, baina çueçaz den becembatean glorificatzen dena.

*Matt.5.11*

15 Bada çuetaric nehor eztadila affligi guicerhaile, edo ohoin, edo gaizquiguile, edo berceren onén guthicioſo beçala:

16 Baina baldin Chriſtino beçala *affligitzen bada* etzayola laido, aitzitic glorifica beça Iaincoa alde harçaz.

17 Ecen ordu da* has dadin iugemendua Iaincoaren etchetic: eta baldin lehenic gureganic *hatſen bada*, ceric içanen da Iaincoaren Euangelioa obeditzen eztutenén fina?

*Hiere.25.28. luc.23.31.*

18 * Eta baldin iuſtoa nequez ſaluatzen bada, infidela eta bekatorea non comparituren da?

*Pro.11.31.*

19 Halacotz bada Iaincoaren vorondatez affligitzen diradenéc, creaçale fidelari beçala bere arimác gommenda bietzote vngui eguinéz.

## CAP. V.

*2 Miniſtreac bere eguimbidearen eguitera exhortatzen. 5 Gazteac inſtruitzen. 8 Sobre eta iratzarri içateco. 9 Fedearen fermetatea 19 Chriſtean deithuac. 12 Iaincoaren gratia. 14 Charitatezco pota.*

1 CVen artean diraden Ancianoey othoitz eguitē drauet nic, *bainaiz* hayén Anciano quide:eta Christen afflictionén testimonio, eta manifestatzeco den glorián participant:

2 Bazca eçaçue Iaincoaren arthalde cargutan eman çaiçuena,harçaz artha duçuelaric,ez gogoz garaitic,baina gogotic:ez irabazte deshonestagatic,baina gogo prest batez.

3 Eta ez *Iaunaren* heretagén gainean seignoriatzen bacendute beçala, baina arthaldearen exemplu çaratezten beçala.

4 Eta aguer dadinean Pastor principala recebituren duqueçue gloriazco coroa incorruptiblea.

5 Halaber gazteác,çareten çaharrén suiet, eta guciac çareten bata bercearen suiet : çareten humilitatez barnetic appainduac:ecen Iaincoac *vrgulutsuey resistitzen draue,eta humiley gratia eguiten.

Iac.4,6.

Iac.4.10. 6 * Humilia çaitezte bada Iaincoaren escu botheretsuaren azpian, ordu datenean goiti çaitzatençat:

Psal.55.23 7 * Çuen artha gucia haren gainera egoizten
sapa 2.13. duçuela: ecen harc artha du çueçaz.
mat.6.25.

luc,12.23. 8 * Çareten sobre, eta veilla eçaçue,ecen çuen
Luc,22.31 etsay deabrua , lehoin marrumalaribat beçala, çuen inguru dabila, cein irets deçaqueen bilha:

9 Resisti ieçoçue fedez fermu *çaretelaric* : da-

quiçuelaric ecen afflictione berac çuen anayén compainia munducoan complitzen diradela.

10 Baina gratia guciaren Iaincoac, ceinec deithu baiquaitu bere gloria eternalera Iesus Christ *Iaunean*, appurbat suffritu dugunean, compli confirma, fortifica eta finca çaitzatela.

11 Hari gloria eta indar secula seculacotz. Amen.

12 Syluano *gure* anaye, vste dudan becembatean, fidelarequin, laburqui scribatu drauçuet: exhortatzen çaituztedalaric, eta testificatzen dudalaric haur dela Iaincoaré gratia eguiazcoa, çeineten baitzaudete.

13 Salutatzen çaituzte Babyloneco *Eliça* çuequin batean elegituac, eta ene seme Marc-ec.

14 *Saluta eçaçue elkar charitatezco potez. Baquea *dela* çuequin gucioquin, c ein baitzarete Iesus Christean, Amen.

Ro.16.16. 1.cor.16.20. 2.cor.13.12.

# S. PIERRIS APOSTOLVAREN BIGARREN

## EPISTOLA CATHOLICOA.

### CAP. I.

*Iaincoaren iustitiá eta eçagutzea. 4 Promessac. 5 Fedea. Verthutea. Scientia. 6 Temperantia. Patientia. 7 Iaincoaren beldurra. Charitatea. 10 Vocationea eta electionea. 11 Christen resumá. 14 Aitzinetic Pierrisec bere herioa ikusten. 19 Prophetén hitzac. 21 Prophetia.*

1 SIMEON Pierrisec Iesus Christen cerbitzari eta Apostoluac, precio bereco fedea gure Iaincoaren eta Iesus Christ Saluadorearen iustitiaz gurequin obtenitu duteney:

2 Gratia eta baque multiplica daquiçuela Iaincoaren eta Iesus gure Iaunaren eçagutzeaz:

3 Nola haren puissança diuinoac eman baitrauzquigu vicitzeco eta pietatezco *diraden* gauça guciac, gu bere gloriara eta verthutera deithu gaituenaren eçagutzeaz:

4 Ceinéz promes handiac eta preciosoac emá içan baitzaizquigu, heçaz natura diuinoan participant eguin çaiteztençát, munduan guthiciamenduz den corruptionetic.

5 *Çuec*-ere bada hunetara berera diligentia gucia ekártẽ duçuelaric eratchequi ieçoçue gainera çuẽ fedeari verthute, eta verthuteari sciẽtia:
6 Eta scientiari temperantia, eta temperantiari patientia, eta patientiari pietatea:
7 Eta pietateari anayetassunezco onheriztea, eta anayetassunezco onheriztear charitatea.
8 Ecen baldin gauça hauc çuetan badirade, eta abundatzen badirade etzaituzte lacho ez fructu gabe vtziren Iesus Christ gure Iaunaren eçagutzean.
9 Baina gauça hauc eztituena itsu da, deus vrrundanic eztacussalaric, ahanciric bere bekatu çaharretaric purificatu içan dela.
10 Halacotz, anayeác, emplega çaitezte affectionatuqui çuen vocationearen eta electionearen fermu eguiten, ecen gauça hauc eguiten dituçuela, etzarete nehoiz-ere eroriren.
11 Ecen hunela Iesus Christ gure Iaunaren eta Saluadorearen resuma eternaleratco sartzea abundosqui administraturen çaiçue.
12 Bada, eznaiz nagui içanen gauça hauçaz bethiere çuen orhoit eracitera, iaquinsu eta confirmatuac baçarete-ere eguia hunetan.
13 Ecen gauça iustoa estimatzen dut, tabernacle hunetan naiceno, aduertimenduz çuen iratzartzea:
14 Daquidalaric ecen ene tabernacle hunen vtzitea sarri içanen dela, *Iesus Christ gure Iaunac declaratu-ere drautan beçala. *Ioan.21. 19.*
15 Baina pena-ere eçarriren dut çuec ene par-

ti ondoan gauça hauçaz mentione eguin ahal deçaçuen.

1.Cor.1.18 2.cor.1.13. 16 *Ecen eztrauçuegu eçagutzera eman Iesus Christ gure Iaunaren botherea eta aduenimendua, fable artez desguisatuey iarreiquiz: baina gure beguiéz haren maiestatea ikussi dugunoc beçala:

17 Ecen recebitu vkan çuen Iainco Aitaganic ohore eta gloria, hunelaco vozbat hari igorri içanic gloria magnificotic, *Haur da ene Seme maitea, ceinetan neure atseguin ona hartzen baitut: Mat.3.17. eta 17.5.

18 Eta guc voz cerutic igorri haur ençun vkan dugu, harequin batean guinadela mendi sainduan.

19 Eta badugu Prophetén hitz gucizco fermua, ceini behatzeaz vngui eguiten baituçue, leku ilhunetan arguitzen duen candela bati beçala, egunac arguitzen has deçaqueno, eta artiçarra ilki daiteno çuen bihotzetan.

2.Tim.3.16. 20 *Baldin lehenic aditzen baduçue haur, ecẽ Scripturaco prophetiaric batre eztela declaratione particularetacoric.

21 Ecen prophetiá ezta guiçonén vorondatez ekarria içan lehenago: baina Spiritu sainduaz inspiraturic minçatu içan dirade Iaincoarẽ guiçon sainduac.

CAP. II.

*1 Propheta falsuac. Perditionetacó sectác. 2 Eguiazco bidea blasphematzen. 5 Noe. 6 Sodoma eta Gomorrha. 7 Lót. 15 Balaám. 19 Libertatea. Suiectionea.*

1 Baina

1 BAina propheta falſuac-ere içã dirade populuaren artean, çuẽ artean-ere doctor falſuac içanen diraden beçala, ceinéc ſecretuqui ſar eraciren baitituzte perditionetaco ſectác: eta hec redemitu dituen Iauna vkaturen baitute, bere buruén gainera perditione laſterra erekartẽ duqueitelaric.

2 Eta anhitz iarreiquiren çaye hayén inſolentiey: ceineçaz eguiazco bidea blaſphematurén baita.

3 Halaco maneraz non auaritiaz enganiotaco hitzez merkatalgoa çueçaz eguinẽ baituqueite: ceinén gainera condemnationeac ia aſpaldidanic ezpaitu berancen, eta ceinén perditionea ezpaitatza lo.

4 Ecen baldin * Iaincoac Ainguetu bekatu eguin vkan dutenac guppida vkan ezpaditu: baina ilhundurataco cadenéz abyſmaturic liuratu vkan ditu, iudicioco reſeruaturic. *Iob.4.18. iud. 6.*

5 Eta lehenagoco mundua eztu guppida vkan, baina * Noe, iuſtitia trompettaria bera çortzigarren beguiratu vkan du, dilubioa gaichtoen mundura erekarriric. *Gen.7.1.*

6 Eta Sodomaco eta Gomorrhaco ciuitateac ilhaunduric * ſubuerſionetara condemnatu vkan ditu, eta eguin vkan du exemplu liraden gaichtoqui vici liradenén. *Gen.19.24*

7 * Eta Lot iuſtoa abominablén conuerſatione diſſolutionezcoaz fatigatua deliuratu vkan du. *Gen.19.13*

8 (Ecen iusto hunec hayén artean habitatzen celaric ikuſtez eta ençutez egunetic egunera tormentatzen çuen *bere* bihotz iuſtoa, *hayen* obra gaichtoén cauſaz)

9 Badaqui Iaunac fidelén tentationetaric deliuratzen: eta iniuſtoén iudicioco eguneco tormentatu diradençát reſeruatzen:

10 Eta principalqui haraguiari darreitzala, guthicia ſatſutara erorten diradenén eta guehientaſſuna menoſpreciatzen dutenén: *hec* audacioſo *eta* bere buruéz pagu *içanez*, eztirade beldur dignitatéz gaizqui minçatzera.

11 Ainguerueć, indarrez eta puiſſançaz handiago badirade-ere, eztute * hayén contra Iaunaren aitzinean gaitzerraitezco ſententiaric emaiten.

**hayén, dignitatén.*

12 Baina hauc, animal brutal bere ſenſualitateari darreitzanaç beçala, hatzamaiteco etá deſeguiteco eguinac dirade, aditzen eztituzten gauçác vituperatzen dituztela, bere corruptione beraz deſeguinen dirade:

13 Recebitzen dutela iniuſtitiazco ſaria, voluptatetan eſtimatzen dituztela egun orozco delicioac, thatchác eta maculác, doſtatzen diradela bere enganioetan çuequin banquetatuz.

14 Beguiac adulterioz betheac dituztela, eta bekatu eguitetic gueldıtzen eztaquitela, arima inconſtantac bazcatzen dituztela, bihotza auaritiatara exercitatua dutela, malediĉtionezco haour diradela:

15 Bide çucena vtziric errebelatu içan dirade, *Balaam Bosoren *semearen* bideari iarreiqui içanic, ceinec iniquitatezco sariari on eritzi baitzaraucan: eta bere iniquitateaz vençutu içan cen: *Nom.22. 23. iud.11.*

16 *Ecen* asto eme vztarrico batec voz humanoz minçaturic reprimi ceçan Prophetarē frenesiá.

17 * Hauc dirade ithurri vr gabeac, hodey haice buhumbaz erabiliac, eta ilhumbezco lanhoa seculacotz beguiratzen çaye. *Iud.12.*

18 Ecen vanitatezco propos guciz arrogantac pronuntiatzen dituztela bazcatzen dituzté haraguiaren guthiciéz eta insolentiéz, erroretan conuersatzen dutenetaric eguiazqui ihes eguin çutenac:

19 * Libertate hæy promettatuz berac corruptionearen sclabo diradelaric, ecen norçaz nehor vençutu içan baita, hura haren sclabo eguin içan da. *Ioan.8.34. rom.6.16.*

20 * Ecen baldin munduco satsutassunetaric retiratu diraden ondoan Iesus Christ Iaunaren eta Saluadorearen eçagutzeaz, guciagatic-ere berriz hetan nahassiric vençut baditéz, hayén azquen conditionea lehena baino gaichtoago eguin içan da. *Mat.12.45 heb.6.4.*

21 Ecen hobe vkan çuqueiten iustitiazco bidea ez lutén eçagutu, ecen ez eçaguturic *hura*, eman içan çayen manamendu saindutic guibeleratzea:

22 Baina hæy heldu içan çaye prouerbio eguiazcoz erraiten ohi dena, * Ora itzuli içan *Pro.26.11*

dabere issurtze proprira: eta, Ahardi ikucia *itzuli içan da* istilera iraulzcatzera.

## CAP. III.

*3 Azquen demboretaco truffariéz. 7 Ceruäc suco reseruatu. 9 Iauna patient. 12 Haren eguna. 13 Ceru berriac eta lur berria. 15 S. Paulen epistoléz.*

1 MAiteác, ia bigarren epistola haur scribatzen draucuet, ceinez iratzartzen baitut aduertimenduz çuenadimendu chahua.

2 Orhoit caretencát Propheta sainduéz aitzinetic erran içan diraden, hitzéz, eta gure manamēduaz, cein baicara Iaunarén eta Saluadorearen Apostolu.

1.Tim.4.1 2.tim.3.1. iud.18. 3 *Haur lehenic daquiçuelaric: ecen ethorriren diradela azqueneco egunetan truffariac, bere guthicia proprién araura ebilten diradela.

4 Eta dioitela, Non da haren aduenimenduco promessa? ecē Aitác lokartu içā diradenaz gueroztic, gauça guciéc hunela continuatzen duté creationearen hatseandanic.

5 Ecen haur bere nahiz ignoratzen duté, nola ceruëc lehenagodanic bere içatea vkan dutén, eta lurrac consistitzen celaric vr barnean eta vr artean, Iaincoaren hitzaz.

6 Halacotz orduco mundua vr dilubio batez estali içanic galdu içan da.

7 Baina orain diraden ceruäc eta lurra hitz be-

raz reseruaturic suco beguiratzen dirade iudicioaren eta guiçon gaichtoén destructionearen eguneco.

8 Baina hunez etzaretela ignorant, maiteác, *ecen egun-bat Iauna beithan milla vrthe beçala, eta milla vrthe egun-bat beçala *diradela.* Psal.90.4.

9 Eztu berancen promettatu duen Iaunac ( batzuc berance estimatzen duten beçala) baina patient da guregana,* ez nahiz nehor gal dadin, baina guciac emendamendutara datocen. Ezec.18.32 eta 33.11. 1.tim.2.4.

10 * Baina ethorriren da Iaunaren eguna, ohoina gauaz beçala, ceinetan ceruäc habarrotsequin iraganen baitirade : eta elementac beroz deseguinē dirade, eta lurra, eta hartaco obra guciac choil erreren dirade. Mat.24.44. 1.thes.5.2. apoc.3.3. eta 16.15.

11 Beraz gauça hauc guciac deseguin behar diradenaren gainean, nolaco behar duçue içan conuersatione saindutan eta pietatezco obratan?

12 Beguira çaudetela, eta lehiatzen çaretela Iaincoaren egunaren aduenimendura, ceinetan ceruäc irachequiric deseguinen baitirade, eta elementac beroz vrthuren?

13 *Baina promessaren araura ceru berrién eta lur berriaren beguira gaude* ceinétan iustitia habitatzen baita. Esa.65.17. eta 66.22. apoc.21.1. *ceinetan, gutan.

14 Halacotz, maiteác, gauça hauén beguira çaudetela, diligentia eçarçue macula gabe eta reprotchu gabe harçaz eriden çaitezten baquerequin.

Rom.2.4. 15 *Eta gure Iaunaren patientiá ſaluamendu eſtima eçaçue: Paul gure anaye maiteac-ere hari eman içan çayón ſapientiaren araura ſcribatu vkan drauçuen beçala:

16 Quaſi bere epiſtola gucietan nola punctu hauçaz minço baita: *ceinétan baitirade batzu aditzeco gaitzic, ignorantéc eta fermetate gabéc makurtzen dituztenic, berce Scripturac-ere beçala, bere buruén deſtructionetan.

*ceinetan, pũctuetan.

17 Çuec beraz, maiteác, engoitic aduertituac çaretenaz gueroztic, beguirauçue abominablén enganioz bercéquin eraman içanic, çuen fermetatetic eror etzaitezten.

18 Baina auança çaitezte Ieſus Chriſt gure Iaunaren eta Saluadorearen gratián eta eçagutzean: ceini *dela* gloria orain eta eternitateco egunerano. Amen.

# S. IOAN APOSTOLVAREN LEHEN EPISTOLA CATHOLICOA.

CAP. I.

*1 Vicitzeco hitza. 3 Communione Iaincoarequin eta Iesus Christequin. 7 Arguian ebiltea. Christen odola. 8 Guciac bekatore.*

1 HATSEAN-DANIC cena, ençun vkan duguna, gure beguiéz ikussi vkan duguna, cõtemplatu vkan duguna, eta gure escuéc hũqui vkan dutena vicitzeco Hitzaz.

2 (Ecen vicitzea manifestatu içan da, eta ikussi vkan dugu, eta testificatzen dugu eta denuntiatzen drauçuegu vicitze eternala, cein baitzén Aita baithan, eta aguertu içan baitzaicu.)

3 Eta ikussi eta ençun vkan duguna, *diot*, denũtiatzẽ drauçuegula, cuec-ere communione duçuençát gurequin, eta gure cõmunionea *da* Aitarequin eta Iesus Christ haren Semearequin.

4 Eta gauça hauc scribatzen drauzquiçuegu çuen bozcarioa compli dadinçát.

5 Haur da bada harenganic ençun vkan dugun mandatalgoa eta denuntiátzen drauçueguna, *Ecen Iaincoa dela arguia, eta ilhumberic batre hura baithan eztela.

Ioan.8.12.

6 Baldin erran badeçagu ecen communione dugula harequin, eta ilhūbean bagabiltza, gueçurra erraiten dugu, eta eztugu eguiten eguiá.

7 Baina baldin arguian bagabiltza, hura arguian den beçala, communione dugu elkarrequin harequin batean, *eta Iesus Christ harē Semearē odolac purgatzen gaitu bekatu orotaric.

Heb.9.14. 28. 1.pier.1.19 apoc.1.5.

8 *Baldin erran badeçagu ecen bekaturic eztugula, gure buruäc seducitzen ditugu, eta eguiá gutan ezta.

1.Reg.8.46. 2.chro.6.36. pro.20.9. eccl.7.21.

9 Baldin confessa baditzagu gure bekatuac, fidel da eta iusto, guri gure bekatuén barkatzeco, eta iniquitate orotaric gure purgatzeco.

10 Baldin erran badeçagu ecen eztugula bekaturic eguin: gueçurti eguiten dugu hura, eta haren hitza ezta gutan.

CAP. II.

1 *Gure aduocata Christ.* 3 *Iaincoaren eçagutzea.* 5 *Haren hitzaren beguiratzea.* 7 *Manamendu çaharra eta berria.* 11 *Bere anayeri gaitz eritzitea.* 12 *Bekatuac nola barkatzen.* 15 *Munduari ez on eritziteco.* 16 *Guthiciá.* 17 *Iaincoaren vorondatea.* 18 *Antechrist.* 20 *Vnctionea.* 22 *Gueçurti nor.* 23 *Vicitze eternala.* 29 *Iaincoaganic iayoa cein.*

1 ENe haourtoác, gauça hauc scribatzē drauzquiçuet, bekaturic eztaguiçuençát: eta baldin cembeitec eguin badu bekaturic, badugu aduo-

catbat Aita baithara, Iesus Christ iustoa.
2 Eta hura da appoinctamēdua gure bekatuacgatic, eta ez gureacgatic solament, baina mundu guciarenacgatic-ere.
3 Eta hunetan daquigu ecen hura eçagutu dugula, baldin haren manamenduac beguira baditzagu.
4 Norc erraiten baitu, Eçagutu dut hura: eta haren manamenduac ezpaititu beguiratzen, gueçurti da, eta eguiá ezta hura baithan:
5 Baina norc beguiratzen baitu haren hitza eguiazqui hura baithā Iaincoaren amorioa complitu da: huneçaz daquigu ecen hura baithan garela.
6 Norc erraitē baitu hura baithan dagoela, behar du, nola hura ebili baita, hala hainac-ereebili
7 Anayeác, eztrauçuet manamendu berribat scribatzen, baina manamendu çahar hatseandanic vkan duçuena: manamēdu çaharra hatseandanic ençun vkan duçuen hitza da.
8 Berçalde manamendu berribat scribatzen drauçuet, cein baita eguiazco hartā eta çuetan: ceren ilhumbea iragan baita, eta eguiazco arguiac ia eguiten baitu argui.
9 Norc erraiten baitu ecen arguian dela, eta bere anayeri gaitz baitaritzá hura ilhumbean da oraindrano.
10 *Bere anayeri on daritzana arguian dago, eta scandaloric ezta hura baithan. *Berr.3.14.
11 Baina bere anayeri gaitz daritzana, ilhumbean da, eta ilhumbean dabila, eta eztaqui norát

ioaiten den:ecen ilhumbeac haren beguiac itſutu vkan ditu.
12 Scribatzen drauçuet,haourtoác,ceren çuen bekatuac barkatu baitzaizquiçue haren icenagatic.
13 Scribatzen drauçuet, aitác, ceren eçagutu baituçue hatſean-danic dena. Scribatzen drauçuet,gazteác,cerẽ gaichtoari garaithu baitzaizquiote. Scribatzen drauçuet,haour chipiác, ceren eçagutu vkan baituçue Aita.
14 Scribatu vkan drauçuet,aitác, ceren eçagutu baituçue hatſean-danic dena. Scribatu drauçuet, gazteác, ceren borthitz baitzarete, eta Iaincoarẽ hitza çuetan egoitẽ baita, eta gaichtoari garaithu baitzaizquiote.
15 Eztuçuela maite mundua, ez mũduco gauçác:baldin cembeitec maite badu mundua,ezta Aitaren amorioa hura baithan.
16 Ecen munduan den gauça gucia (*hala nola*, haraguiaren guthiciá, eta beguien guthiciá, eta vicitzearen arrogantiá)ezta Aitaganic baina da munduaganic.
17 Eta mundua iragaiten da, eta haren guthiciá,baina Iaincoaren vorondatea eguiten duena dago ſeculacotz.
18 Haourtoác, azquen dembora da: eta nola ençun vkan baituçue ecen Antechriſt ethorteco dela, oraindanic-ere Antechriſtac anhitz dirade: nondic baitaquigu ecen azquen demborá dela.
19 Gure artetic ilki içan dirade baina etzira-

den gutaric: ecen baldin gutaric içan balirade, gurequin egon ciratequeen: baina *haur eguin içan da* manifesta ledinçát ecen guciac eztiradela gutaric.

20 Baina çuec baduçue vnctionea Sainduaganic, eta eçagutzen dituçue gauça guciac.

21 Eztrauçuet scribatu vkan, eguiá eçagutzen eztuçuelacotz: aitzitic ceren hura eçagutzen duçuen, eta gueçurric batre ezpaita eguiatic.

22 Nor da gueçurti, Iesus dela Christ vkatzen duena baicen? hura da Antechrist, ceinec Aita eta Semea vkatzen baititu.

23 Norc-ere vkatzen baitu Semea, harc Aita-ere eztu: norc-ere aithortzen baitu Semea, harc Aita-ere badu.

24 Beraz hatsean-danic ençun vkan duçuena çuetan bego: ecen baldin çuetan badago hatseandanic ençun vkã duçuena, çuec-ere Semea baithan eta Aita baithan egonen çarete.

25 Eta haur da berac guri promettatu draucun promessa, *baita*, vicitze eternala.

26 Gauça hauc scribatzen drauzquiçuet, çuec seducitzen çaituztenéz.

27 Baina harẽganic recebitu vkan duçuen vnctionea dago çuetan, eta eztuçue mẽgoaric nehorc iracats çaitzatẽ: baina vnctione berac gauça guciéz iracasten çaituzten beçala, eta eguiati da, eta ezta gueçurti: eta *vnctioneac* iracatsi çaituzten beçala, *hartan egonen çarete.

*hartan, Iaincoa baithan.

28 Orain bada, *ene* haourtoác, çaudete hartan: aguer dadinean assegurança dugunçát, eta haren

aitzinean cõfus ezgarençát, haren aduenimenduan.

29 Baldin badaquiçue ecen hura iusto dela, iaquiçue ecen norc-ere iustitia eguiten baitu, *hura* harenganic iayo dela.

CAP. III.

*1, 16 Iaincoaren eta Christen charitatea. 2 Iaincoaren haour. 3 Sperança duena. 4 Bekatua. Iusto nor. 9 Iaincoaren hacia. 10 Deabruaren haourrac. 11 Elkarganaco amorioa. 12 Cain. 15 Guicerhaile nor. 17 Hurcoaganaco amorioa. 19 Bihotzeco segurançá. 23 Iaincoaren manamendua eta Spiritua.*

1 IKussaçue nolaco charitatea guri eman draucun Aitac, *baita*, Iaincoaren haur deitha gaitecen: halacotz munduac ezgaitu eçagutzen, ceren ezpaitu hura eçagutzen.

2 Maiteác, orain Iaincoaren haour gara, baina oraino ezta aguertu içanen garena: badaquigu ordea ecen *hura* aguer dadinean, hura irudico dugula: ecen den beçala ikussirẽ duquegu hura.

3 Eta norc-ere sperança haur baitu hura baithan, purificatzen du bere buruä, hura-ere pur den beçala.

4 Norc-ere bekatu eguiten baitu, Leguearen contra-ere eguiten du: eta bekatua da Leguearen contra dena.

*Esa.53.6. 1.pier.2.22 24.*

5 Eta badaquiçue ecen hura aguertu içan dela *gure bekatuac ken litzançát, eta bekaturic hu-

ra baithan eztela.

6 Hura baithan egoiten denec eztu bekaturic eguiten: norc-ere bekatu eguiten baitu, eztu ikussi hura, eta eztu eçagutu hura.

7 Haourtoác, nehorc seduci etzaitzatela: iustitia eguitẽ duena, iusto da, hura iusto den beçala.

8 *Bekatu eguiten duena, deabruaganic da: ecen hatseandanic deabruac bekatu eguiten du: hunetacotz aguertu içan da Iaincoaren Semea, deseguin litzançát deabruaren obrác.

*Ioan 8.44.*

9 Nor-ere iayo içan baita Iaincoaganic, *haro* bekaturic eztu eguiten: ecen haren hacia haina baithan dago, eta ecin daidi bekaturic, ceren Iaincoaganic iayo içan baita.

10 Hunetan agueri dirade Iaincoaren haourrac eta deabruarẽ haourrac: norc-ere iustitia ezpaitu eguiten, eta ezpaitu bere anayea onhesten *hura* ezta Iaincoaganic.

11 Ecen haur da hatseandanic ençun vkan duçuen mandatalgoá, *Elkarri on eritzi dieçogun.

*Ioan 13.34 eta 15.12.*

12 Ez *Cainec beçala, cein baitzén Gaichtoaganic, eta *ceinec* hil baitzuen bere anayea. Eta cergatic hil vkan çuen? ceren haren obrác gaichto baitziraden, eta haren anayearenac iusto.

*Gene.4.8.*

13 Ene anayeác, ezteçaçuela mirets baldin çuey gaitz badaritzue munduac.

14 Gúc badaquigu ecen iragan garela heriotic vicitzera, ecen on dariztegu anayey: *anayeari on eztaritzana, herioan dago.

*Leui.19.17 lehen 2.10.*

15 Norc-ere gaitz baitaritza bere anayeri *hura* guicerhaile da: eta badaquiçue guicerhailec

batec-ere eztuela vicitze eternal bere baithan dagoena.

Ioan 15.13 ephes.5.2. 16 *Hunetan eçagutu vkan dugu charitatea, ceren harc bere vicia guregatic eçarri vkan baitu, guc-ere beraz *gure* viciac anayeacgatic eçarri behar ditugu.

Luc 3.11. 17 *Bada norc vkanen baituque mũduco onetaric, eta ikuſſiren baituque haren anáyeac neceſſitate duqueela eta ertſiren baitrautza bere halſarrac, nolatan Iaincoaren charitatea egoiten da hura baithan?

18 Ene haourtoác, ezteçagula on eritzi hitzez ezeta mihiz, baina obraz eta eguiaz:

19 Eta hunetan eçagutzen dugu ecen eguiatic garela, eta haren aitzinean ſeguraturen ditugu gure bihotzac.

20 Ecen baldin condemna baguitza gure bihotzac, handiago da Iaincoa gurę bihotza baino, eta eçagutzen ditu gauça guciac.

21 Maiteác, baldin gure bihotzac condemnatzen ezpagaitu, ſeguráça dugu Iaincoa baithan.

Matth.7.7 eta 21.22. ioan 15.7. eta 16.23. berr.5.24. 22 *Eta ceren-ere eſca bagaitez, recebitzen dugu harenganic: ecen haren manamenduac beguiratzen ditugu, eta haren aitzinean placént diraden gauçác eguiten ditugu.

Ioan 6.29. eta 17.3. 23 *Eta haur da haren manamendua, Sinhets deçagun Ieſus Chriſt haren Semearen icenean, eta elkarri on daritzogun, manamendu eman dracun beçala.

Ioan 13.24 eta 15.10. 24 *Eta haren manamenduac beguiratzen dituena, hura baithan egoiten da, eta hura haina

baithan: eta huneçaz eçagutzen dugu ecen hura egoiten dela gutan, *da iaquiteco*, eman vkan draucun Spirituaz.

CAP. IIII.

*1 Spirituac nola ditugun phorogatzeco. 2 Iaincoaren Spiritua, eta Antechristena: eguiazcoa, eta errorezcoa. 10 Iaincoaren gureganacó charitatea. 14 Christ munduaren Saluadore. 15 Iaincoaren Semea. 16 Iaincoa charitate. 20 Anayetaſſunezco onheriztea.*

1 MAiteác, ſpiritu gucia ezteçaçuela ſinhets, baina phorogaitzaçue ſpirituac eya Iaincoaganic diradenez: ecen anhitz propheta falſu ethorri içan dirade mundura.

2 Hunetan eçagut eçaçue Iaincoaren Spiritua. Ieſus Chriſt haraguitara ethorri dela confeſſatzen duen ſpiritu gucia, Iaincoaganic da.

3 Eta cein-ere ſpirituc ezpaitu confeſſatzen Ieſus Chriſt haraguitara ethorri içan dela *hura* ezta Iaincoaganic: eta halaco *ſpiritua* Antechriſtena da, ceinez minçatzen ençun vkan baituçue, ecen ethorteco dela, eta ia orain munduan da.

4 Haourtoác, çuec Iaincoaganic çarete, eta garaithu çaizte hæy: ecen handiago da çuetan dena, ecen ez munduan dena.

5 Hec mundutic dirade, halacotz munduaz minço dirade, eta mundua hæy behatzen çaye.

6 *Gu Iaincoaganic gara: Iaincoa eçagutzen *Ioan 8. 47.*

duena, guri behatzen çaicu: Iaincoaganic eztena guri etzaicu behatzen: hunetan eçagutzen dugu eguiazco Spiritua, eta errorezco ſpiritua.

7 Maiteác, elkarri on eritzi dieçogun: ecē charitatea Iaincoaganic da: eta norc-ere onheſten baitu, *hura* Iaincoaganic iayo da, eta eçagutzen du Iaincoa.

8 Onheſten eztuenac, eztu eçagutzen Iaincoa: ecen Iaincoa charitate da.

*Ioan 3.16.* 9 *Hunetan manifeſtatu içan da Iaincoarē gureganaco charitatea, ceren bere Seme bakoitza igorri vkan baitu Iaincoac mundura, harçaz vici garençát.

10 Hunetan da charitatea, ez cerē guc onhetſi dugun Iaincoa, baina ceren harc onhetſi baiquaitu gu, eta igorri vkan baitu bere Semea gure bekatuacgatic appoinctamendu licençát.

11 Maiteác, baldin hunela Iaincoac onhetſi baiquaitu, guc-ere behar dugu elkar onhetſi.

*Ioan 1.12. 1.tim.6.16* 12 *Iaincoa eztu nehorc ikuſſi egundano: baldin elkar maite badugu Iaincoa gutan dago, eta haren charitatea complitu da gutan.

13 Hunetan eçagutzen dugu ecen hartā egoiten garela, eta hura gutan, ceren bere Spiritutic eman baitraucu.

14 Eta guc ikuſſi vkan dugu, eta teſtificatzen dugu ecen Aitác igorri vkan duela Semea munduaren Saluadore *içateco.*

15 Norc-ere cōfeſſaturen baitu ecen Ieſus dela Iaincoaren Semea, Iaincoa hura baithan dago, eta hura Iaincoa baithan.

16 Eta

16 Età guc eçagutu eta sinhetsi dugu Iaincoac guregana duen charitatea. Iaincoa charitate da: eta charitatean egoiten dena, Iaincoa baithan egoiten da, eta Iaincoa hura baithan.

17 Huneçaz complitu içan da charitateá güregana, iudicioco egunean segurança dugunçát, ceren hura den beçalaco baicara gu-ere mundu hunetan.

18 Beldurric ezta charitatean: aitzitic charitate perfectoac campora egoizten du beldurra: ecen beldurrac tormenta du: eta beldur dena ezta complitua charitatean.

19 Guc hari on daritzagu, ceren harc lehenic onhetsi baiquaitu gu.

20 Baldin nehorc errã badeça, Maite dut Iaincoa: eta bere anayeari gaitz badaritza: gueçurti da: ecen bere anaye dacussana maite eztuenac, ikusten eztuen Iaincoa nola maite ahal duque?

21 *Eta manamendu haur dugu harenganic, Iaincoa maite duenac, maite duen bere anayeaere.

*Ioan 13.34 eta 15.12.*

CAP. V.

*1 Iaincoaganic iayoa cein. 3 Iaincoaren manamenduac. 4 Victoriá. 5 Fedea. 7 Iaincoaren testificationea eta guiçonena. 10 Iaincoaren Semea baithan sinhestea. 11 Vicitze eternala Iaincoaren Semean. 14 Fedezco othoitza. 16 Heriotara den bekatua. 18 Bekaturic eguitẽ eztuena cein. 20 Christ Iainco eguiazco. 21 Idolác.*

1 NOrc-ere ſinheſtẽ baitu ecen Ieſus dela Chriſt *hura* Iaĩcoaganic iayoa da:eta norc-ere on baitaritzá engẽdratu duenari, on daritzá harenganic engendratu içan denari-ere.

2 Hunetan eçagutzen dugu ecen on daritztegula Iaĩncoaren haourrey, Iaincoari on daritzagunean, eta haren manamenduac beguiratzen ditugunean.

*Matth.11. 30.*

3 *Ecen haur da Iaincoaren charitatea, haren manamenduac beguira ditzagun,eta haren manamenduac gaitzac eztirade.

4 Ecen cer-ere Iaincoaganic iayo baita, garaitzen çayo munduari: eta haur da victoria munduari garaithu çayona,gure fedea.

*1.Cor.15. 57.*

5 *Nor da munduari garaitzen çayona, Ieſus dela Iaincoaren Semea ſinheſten duena baicen?

6 Haur da Ieſus Chriſt vrez eta odolez ethorri içan dena: èz vrez ſolament,baina vrez eta odolez:eta Spiritua da teſtificatzen duena ecen Spiritua eguia dela.

7 Ecen hirur dirade teſtificatzen dutenac ceruän, Aita, Hitza, eta Spiritu ſaindua: eta hauc hirurac bat dirade.

8 Eta hirur dirade teſtificatzẽ dutenac lurrean, Spiritua eta vra eta odola:eta hirur hauc batetan dirade.

9 Baldin guiçonén teſtificationea recebitzen

badugu Iaincoaren teſtificationea handiago da: ecen haur da Iaincoaren teſtificationea;ecin teſtificatu vkan baitu bere Semeaz.

10 *Iaincoaren Semea baithan ſinheſten duenac, badu Iaincoaren teſtificationea bere baithan:Iaincoa ſinheſten eztuenac,gueçurti eguiten du hura: ecen eztu ſinhetſi vkan. Iaincoac bere Semeaz teſtificatu vkan duen teſtificationea.

*Ioan 3.36.*

11 Eta haur da teſtificationea, ecen vicitze eternala eman draucula Iaincoac: eta vicitze haur haren Semean da.

12 Semea duenac,badu vicitzea:Iaincoaren Semea eztuenac,eztu vicitzea.

13 Gauça hauc ſcribatu vkan drauzquiçuet çuey, Iaincoaren Semearen icena baithan ſinheſten duçuenoy: daquiçuençát ecen baduçuela vicitze eternala, eta ſinhets deçaçuençát Iaincoaren Semearen icena baithan.

14 Eta haur da Iaincoa baithan dugun confidançá,*ecen baldin cerbait eſca bagaitez haren vorondatearen araura,ençuten gaituela.

*Matt. 7.7. eta 21.22. ioan 15.7. eta 16.23. leben.3.22*

15 Eta baldin badaquigu ecen harc ençuten gaituela, cer-ere eſca bagaitez: badaquigu ecen baditugula galdeguiten drauzquiogun eſqueac.

16 Baldin cembeitec ikuſten badu bere anaye bekatu eguiten duela heriora ezten bekatuz, eſcaturen çayó *Iaincoari*, eta emanen drauca hari vicitze: bekatu eguiten duteney *diot* ez heriora. *Bekatua denean heriora, eztiat erraiten harengatic othoitz daguián.

*Mat.12.31 marc 3.29.*

17 Iniquitate gucia bekatu da: baina bada bekatu heriora eztenic.
18 Badaquigu ecen nor-ere Iaincoaganic iayo baita, *harc* eztuela bekaturic eguitẽ: baina Iaincoaganic engẽdratu içan denac, beguiratzen du bere buruä, eta Gaichtoac eztu hũquitzen hura.
19 Badaquigu ecen Iaincoaganic garela: eta mundu gucia gaichtoan datzala.
20 Baina badaquigu ecen Iaincoaren Semea ethorri içan dela, *eta eman draucula adimendu eguiati denaren eçagutzeco: eta gara eguiatian, Iesus Christ haren Semean: haur da eguiazco Iaincoa, eta vicitze eternala.

*Luc 24.45.*

21 Haourtoác, beguira çaitezte idoletaric. Amẽ.

# S. IOANNEN BIGARREN EPISTOLA.

*5 Elkargànaco amorioa. 6 Iaincoaren manamendua. 7 Antechrist. 9 Christen doctriná. 10 Hereticoequin ez communiçatzeco.*

1 ANCIANOAC andre eleguituari, eta haren haourrey, cein nic eguiaz maite baititut, eta ez nic neurorrec *solament*, baina eguiá eçagutu vkan duten guciéc-ere:
2 Gutan dagoen eta seculacotz gurequin içanen den eguiaren ca[illegible]saz:

3 Gratia, misericordia, baquea dela çuequin Iainco Aitaganic, eta Aitaren Seme Iesus Christ Iaunaganic, eguiarequin eta charitaterequin.

4 Aleguerátu içan naun haguitz, ceren eriden dudan hire haourretaric eguián dabiltzala, manamẽdu recebitu vkan dugun beçala Aitaganic.

5 Eta orain othoitz eguiten draunat, andreá, ez manamendu berriric scribatzen banaraun beçala, baina hatseandanic vkan duguna, *elkarri on daritzogun.

Ioan 15.12

6 Eta haur da charitatea, ebil gaitecen haren manamẽduén araura: haur da manamẽdua hatseandanic ençun vkan duçuen beçala, hartan ebil çaitezten.

7 Ecen anhitz abusari sarthu içan da mundura, haceinéc ezpaitute confessatzen Iesus Christ haraguitan ethorri içan dela: halacoa abusari da eta Antechrist.

8 Gogoauçue çuen buruëtara, gal eztitzagunçát eguin ditugun gauçác, baina sari bethea recebi deçagunçát.

9 Norc-ere iragaiten baitu, eta ezpaita egoiten Christen doctrinán, Iaincoa eztu: Christen doctrinán egoiten denac Aita eta Semea baditu.

10 Baldin cembeit ethorten bada çuetara, eta doctrina haur ezpaitu ekarten, * hura ezteçaçuela recebi etchera, ezeta saluta.

Rom.16.17

11 Ecen hura salutatzen duenac communicatzen du haren obra gaichtoequin.

12 Anhitz gauça banuen-ere çuey scribatzecoric, eztitut paperez eta tintaz scribatu nahi

vkan,baina ſperança dut ethorriren naicela çuetara eta ahoz aho minçaturen, gure bozcarioa complitua dençát.

13 Hire ahizpa elegituaré haourréc ſalutatzen auté.

# S. IOANNEN HIRVRGARREN EPISTOLA.

*4 Integroqui ebiltea. 8 Affligituac recebitzeco. 9 Diotrephes. 11 Vngui eguiten duena Iaincoaganiç. 12 Demetrius.*

1 ANCIANOAC Gayo maitenic eguiazqui on daritzadanari.

2 Maiteá,deſiratzé diat gauça gucietan proſpera deçán, eta ſendo aicén, hire arimá proſpero dé beçala.

3 Ecen aleguerátu içan nauc haguitz ethorri içan diradenean anayeac eta teſtificatu vkã dutenean hire integritateaz, nola integroqui ebilten baitaiz.

4 Haur baino bozcario handiagoric eztiát,*cein baita*, ençuten dudanean ene haourrac integroqui dabiltzala.

5 Maiteá, fidelqui eguiten duc cer-ere eguiten baituc anayetara eta eſtrangeretara.

6 Ceinéc teſtificatu vkan baituté hire charitateaz Eliçaré preſentián : hec baldin guida baditzac Iaincoari dagocan beçala,vngui daidiquec.

7 Ecen harẽ icenagatic partitu içan dituc, deus hartzen etzutela Gentiletaric.
8 Guc beraz behar citiagu recebitu halacoac, eguiá aiuta deçaguncát.
9 Scribatu diarocát Eliçari:baina hayén artean lehen içan aiher denac,Diotrephesec ezguiaitic recebitzen.
10 Halacotz, baldin ethor banadi aippaturen citiat harc eguiten dituen obrác, elhe gaichtoz dadaſſala gure contra: eta hauçaz ez contentez, eztitic berac anayeac recebitzen, eta *recebitu* nahi dituztenac empatchatzen citic eta Eliçatic egoizten.
11 Maiteá, ezteçála imita gaitza, baina ona: vngui eguiten duena, Iaincoaganic duc: baina gaizqui eguiten duenac eztic ikuſſi Iaincoa.
12 Demetrioz guciéc teſtificatzen dié, eta eguiac berac-ere:baina guc-ere teſtificatzen diagu, eta eçagutu vkan duçue ecen gure teſtificationea eguiazco dela.
13 Banián anhitz gauça ſcribatzecoric, baina eztrauát tintaz eta hegatſez ſcribatu nahi.
14 Baina ſperança diát ſarri ikuſſiren audala, eta ahoz aho minçaturen garela.
15 Baquea *dela* hirequin. Salutatzen auté adiſquidéc. Salutaitzac adiſquideac icenguilatuqui.

# S. IVDA APOSTOLVAREN EPISTOLA CATHOLICOA.

*1 Sanctificatuac Iainco Aita Iaunean. 3 Bihotz hartzeco fedeagatic. 4 Iaincoa eta Christ renuntiatzen dituztenac. 11 Cain, Balaam, Core. 17 Apostoluén hitzéz orhoit içateco. 20 Fedea eta orationea. 23 Gaizqui doacenac harrapatzeco.*

1 IVDA Iesus Christen cerbitzari eta Iacquesen anayeac, Iainco Aitaz sanctificatu, eta Iesus Christez conseruatu diraden deithuey,

2 Misericordia eta baque eta charitate multiplica daquiçuela.

3 Maiteác, artha handi dudalaric çuey scribatzera saluamendu communaz, necessario içan çait çuey scribatzera, exhorta çaitzatedançát bihotz hartzera behin sainduey emã içan çayen fedeagatic.

4 Ecen ichilic sarthu içan dirade guiçon batzu, lehen ia aspaldian damnatione hunetacotz enrolatuac, gende Iaincoaren beldur gabeac, gure Iaincoaren gratia cambiatzen dutela dissolutionetara, eta Iainco Iabe bakoitza, eta Iesus Christ gure Iauna renuntiatzen dituztela.

5 Bada *gauça hauc* aippatu nahi drauzquiçuet, ikussiric ecen haur behin badaquiçuela, ecen

Iaunac populua Egyptetic deliuratu çuenean, ſinhetſi vkan etzutenac * guero deſeguin vkan cituela.

Nom.14.37.

6 * Eta Aingueru bere hatſea beguiratu vkan etzutenac, baina bere principaltaſſuna vtzi vkã çutenac, ilhumbe azpian ſeculaco eſtecaduretan egun handico iudiciorano reſeruatu vkan dituela.

2.Pier.2.4.

7 * Sodoma eta Gomorrha, eta hayén aldirietaco hiri hayén moldera paillardatu çutenac, eta berce haraguiaren ondoan ioan ciradenac, exẽplutan propoſatu içan diraden beçala, ſu eternaleco pená ſuffritzen dutela.

Gen.19.24

8 Halaber ordea hauc-ere lokarturic bere haraguia ſatſutzen duté eta ſeignoriá menoſpreciatzen eta dignitatéz gaizqui erraiten duté.

9 Guciagatic-ere Michel Archangelua, deabruaren contra ciharducanean diſputatzen cela Moyſeſen gorputzaz, etzedin ventura malediɛtionezco ſententiaren emaitera, baina erran ceçan, Iaunac mehatchaçala.

10 Baina hauc, aditzen eztituzten gauça guciéz gaizqui erraiten ari dirade, eta naturalqui abre brutalec beçala eçagutzen dituzten gauça gucietan corrumpitzen dirade.

11 Malediɛtione hayén gainean: ecen * Cainen bideari iarreiqui içan çaizquio, eta * Balaam enganatu içan den alocairuaren enganioz abãdonnatu içan dirade, eta * Core-erén contradiɛtionearen araura deſeguin içan dirade

Gen.4.8.
Nom.22.21.
2.pier.2.15
Nom.16.1.
2.pier.2.17

12 Hauc dirade çuen charitatezco othorence-

taco maculác, çuequin banquetatuz, nehoren beldur gabe bere buruäc bazcatzen dituztela: *hodey vr gabe haicéz hara huna erabiliac: arbore çumel fructu gabeac, biguetan hilac, erroetaric ilkiac:

*2.pier.2.17*

13 Itsassoco baga dorpeac, bere vileniéz hagun eguiten dutela, içar errebelatuac, ceinéy apprestatua baitaye tenebretaco ilhũhea eternalqui.

14 Eta prophetizatu vkan du hauçaz-ere Adamen ondoco çazpigarren guiçonac, Enoch-ec, cioela,

*Apoc.1.7.*

15 * Huná, ethorri içan da Iauna bere millionezco saindu'equin, gucién contra iugemendu emaitera, eta hayén arteco gaichto gucién vençutzera obra gaichto gaichtoqui eguin dituzten guciéz, eta bekatore gaichtoéc haren contra erran dituzten hitz gogor guciéz.

16 Hauc dirade murmuraçale, reuoltari, bere guthicietan dabiltzanac, eta * hayén ahoa propos gucizco hantuz minço da, personac admirationetan dituztela *bere* probetchuagatic.

*Psal.17.10*

17 Baina çuec, maiteác, çareten orhoit Iesus Christ gure Iaunaren Apostoluéz aitzinetic erran içan diraden hitzéz:

*1.Tim.4.1*
*2.tim.3.1.*
*2.pier.3.3.*

18 Ecen erran vkan drauçuela, nola * azquen demboretan içanen diraden abusariac, *bere* gaichtaquerietaco guthicién araura ebiliren diradenac.

19 Hauc dirade bere buruäc separatzen dituztenac, gende animalac, Spiritua eztutenac.

20 Baina çuec, maiteác çuen fede gucizco sain-

duaren gainera çuen buruäc edificatzen dituçuela, eta Spiritu sainduaz othoitz eguiten duçuela,

21 Elkar Iaincoaren charitatean conserua eçaçue, Iesus Christ gure Iaunaren misericordiaren beguira çaudetela vicitze eternalecotzat.

22 Eta auçue batzuéz pietate, discretionez vsatzen duçuela.

23 Eta berceac iciduraz saluaitzaçue, suti c arrapatzen dituçuela, haraguiaz maculatu arropari-ere gaitz daritzoçuela.

24 Gaineracoaz, trebucatu gabe beguira, eta bozcariorequin irreprehensible bere gloria aitzinera eraman ahal çaitzaizqueten Iainco çuhur bakoitzari, *eta* gure Saluadoreari, *dela* gloria eta magnificentia eta indar eta puissança, eta orain eta secula gucietacotz. Amen.

# IOANNES THEOLOGIANOAREN APOCALYPSEA EDO REVELATIONEA.

CAP. I.

*4 Ioannesec çazpi Elicey scribatzen. 5, 8, 11, 17 Christ da hatsea eta fina. 16 Bi ahotaco ezpatá. 18 Iffernuaren eta herioaren gakoac.*

1 IESVS CHRISTEN Apocalypsea, cein eman vkan baitrauca hari Iaincoac, declara dietzençát bere cerbitzariey sarri eguin behar diraden gauçác: eta *harc* bere Ainguerüärequin igorriric Ioannes bere cerbitzariari significatu vkan drautzá.

2 Ceinec testificatu vkan baitu Iaincoaren hitzaz eta Iesus Christé testimoniageaz eta ikussi vkan dituen gauça guciéz.

3 Dohatsu *da* iracurtzen duena, eta *dohatsu dirade* prophetia hunetaco hitzac ençuten, eta hartan scribatuac diraden gauçác beguiratzen dituztenac: ecen demborá sarri da.

4 Ioannesec Asian diraden çazpi Elicey, Gratia *dela* eta baquea çuequin * Denaren eta Ce-

Exod.3.14

naten eta Ethortecoaren partez:eta harē throno aitzinean diraden çazpi ſpirituén partez,

5 Eta Ieſus Chriſten partez,* *cein* baita teſtimonio fidela, *hiletarico lehen iayoa, eta lurreco reguén Princea,

Pſal.89.38
1.Cor.15.20.
coloſſ.1.18

6 Ceinec onhetſi baiquaitu eta ikuci gure bekatuetaric* bere odolaz: eta eguin baicrauzquió * Regue eta Sacrificadore Iainco bere Aitari: hari *bada* dela gloria eta indar ſecula ſeculacotz. Amen.

Heb.9.14.
1.pier.1.19
1.ioan.1.9.
1.Pier.2.5.

7 * Huná,ethorten da hodeyéquin eta ikuſſiren du hura begui oroc,hura çulhatu vkan dutenécere: eta plagnituren dirade haren aitzinean lurreco leinu guciac: bay, Amen.

Eſa.3.14.
mat.24.30
iud.14.

8 * Ni naiz α eta ω, *erran nahi baita*, hatſea eta fina, dio Iaunac, Denac, eta Cenac, eta Ethorteco denac,*diot*, Bothere gucitacoac.

Berriz.21.6.
eta 22.13.

9 Ni Ioannes,eta Ieſus Chriſten afflictionean eta reſumán eta patientián çuen anayea eta laguna, Patmos deitzen den Iſlán nincén, Iaincoaren hitzagatic, eta Ieſus Chriſten teſtimoniageagatic.

10 Nincén Spiritutan Igande egun batez, eta ençun neçan neure guibelean voz handibat trompetta batena beçala, cioela,

11 Ni nauc α eta ω, lehena eta azquena, eta Ikuſten duána ſcribeçac liburu batetan,eta igor eçac Aſian diraden çazpi Elicetara,*cein baitirade*, Epheſen eta Smyrnen, eta Pergamen, eta Thyatiren, eta Sarden, eta Philadelphian eta Laodicean.

12 Orduan itzul nendin enequin minçatu içan cen vozaren ikuſtera: eta itzuliric ikus nitzan çazpi candelér vrrhezcoric:

13 Eta çazpi vrrhezco candelerén artean guiçonaren Semea irudi çuembat, *arropa* luce batez veztitua, eta vrrhezco guerrico batez vgatzén aldean guerricatua.

14 Eta haren buruä eta biloac *ciraden* churi, ille churia beçala, *eta* elhurra beçala: eta haren beguiac ſuaren garra beçala:

15 Eta haren oinac cobre fina beçalaco, labean beçala çachetéla: eta haren voza vr handién hotſa beçala.

16 Eta cituen bere eſcu eſcuinean çazpi içar, eta haren ahotic bi ahotaco ezpata çorrotzbat ilkiten cen: eta haren beguithartea *cen argui* iguzquiac bere indarrean argui eguiten duen beçala.

17 Eta hura ikuſſi vkan nuenean, eror nendin haren oinetara hila beçala: eta eçar ceçan bere eſcu eſcuina ene gainean, cioſtala, Eztuála beldurric: *ni nauc lehena eta azquena, eta vici naicena:

*Eſa.41.4. eta 44.6.*

18 Baina hil içan nauc, eta huná, vici nauc ſeculà ſeculacotz, Amen: eta citiát iffernuaren eta herioaren gakoac.

19 Scribaitzac ikuſſi vkan dituan gauçác, eta diradenac eta hauén ondoan eguin behar diradenac:

20 Ene eſcu eſcuinean ikuſſi vkan dituán çazpi içarrén myſterioa, eta çazpi candelér vrrhez-

coac. Çazpi içarrac, çazpi Elicetaco Aingueruäc dituc eta ikussi dituán çazpi candelerac, çazpi Eliçác dituc.

CAP. II.

2 *Apostolu falsuac.* 5 *Penitentia.* 6 *Nicolaitác.* 7 *Vicitzeco arborea.* 11 *Bigarren herioa.* 13 *Antipas.* 14 *Balaam.* 16. *Ezpatá.* 20 *Iesabel.* 28 *Artiçarra.*

1 EPhesen *den* Eliçaco Aingueruäri scriba ieçóc, Çazpi içarrac bere escu escuineā dadutzanac, çazpi candeler vrrhezcoén artean dabilanac, gauça hauc erraiten citic:

2 Baceaquizquiat hire obrác, eta hire trabaillua, eta hire patientiá eta nola gaichtoac ecin suffri ditzaqueán, eta experimentatu dituán Apostolu erraiten diradenac eta ezpaitirade: eta eriden duc hec *diradela* gueçurti.

3 Eta suffritu vkan duc, eta patientia duc, eta trabaillatu içan aiz ene icenagatic, eta ezaiz enoyatu içan.

4 Baina badiát *cerbait* hire contra, ceren eure leheneco charitatea vtzi vkan baituc.

5 Bada orhoit adi nondic erori aicén, eta dolu bequic, eta leheneco obrác eguin itzaç: ezpere ethorriren nauc hire contra sarri, eta kenduren diát hire candelera bere lekutic, baldin dolu ezpadaquic.

6 Baina haur baduc, Nicolaiten obrey gaitz baitariztec, hæy nic-ere gaitz diariztear.

7 Beharriric duenac ençun beça cer Spirituac erraiten drauen Elicey, Victoriosoari emanen draucat iatera vicitzeco arboretic cein baita Iaincoaren paradisoaren erdian.

8 Smyrnen *den* Eliçaco Ainguerüäri-ere scriba ieçóc, Lehenac eta azquenac, hil içan denac eta viztu içan denac, gauça hauc erraiten citic:

9 Baceaquizquiat hire obrác, eta tribulationea, eta paubreciá (baina abrats aiz) eta bere buruäc Iudu eguitẽ dituztenén blasphemioa, eta ezpaitirade, baina *dituc* Satanen synagoga.

10 Ezaicela suffritzeco dituán gaucen beldur: huná, deabruac çuetaric batzu presoinean eçarteco citic phoroga çaitezten çát, eta vkanen duçue tribulatione hamar eguneż: aicén fidel heriorano, eta emanen drauát vicitzeco coroa.

11 Beharriric duenac ençun beça cer Spirituac erraiten drauẽ Elicéy, Victoriosoari etzayo calteric eguinen bigarren herioaz.

12 Pergamen *den* Eliçaco Ainguerüäri-ere scriba ieçóc, Bi ahotaco ezpata çorrotza duenac, gauça hauc erraiten citic,

13 Baceaquizquiat hire obrác, eta non habitatzen aicén, Satanen thronoa den lekuan: eta ene icena badaducac, eztuc renuntiatu vkan ene fedea: Are Antipas ene martyr fidela heriotara eman içan den eguneạn-ere çuen artean, non habitatzen baita Satan.

14 Baina cerbait gauça appur badiat hire contra, ecen baduála hor* Balaamen doctriná eduquiten dutenetaric, ceinec iracasten baitzuen

Nom. 24. 14. eta 25. 1.

Balac

Balac Israeleco haourrén aitzinean scandalo eçartera, idoley sacrificatzen çaizten gaucetaric iatera, eta paillardatzera.
15 Halaber baduc *hic* Nicolaitén doctriná daducatenetaric-ere, cein baita nic gaitz daritzadan gauçá.
16 Dolu bequic: ezpere, ethorriren nauc hire contra sarri, eta bataillaturen nauc hayén contra neure ahoco ezpatáz.
17 Beharriric duenac ençun beça cer Spirituac erraiten drauen Elicey, Victoriosoari emanen draucat iatera gordea dagoen Mannatic, eta emanen draucat harri churibat: eta harrian icen berribat scribaturic, cein nehorc ezpaitu eçagutzen, recebitzen duenac baicen:
18 Thyatiren *den* Eliçaco Aingueruäri-ere scriba ieçóc, Iaincoaren Semeac, ceinec baititu beguiac suaren garra beçala, eta ceinen oinéc cobre fina irudi baitute, gauça hauc erraiten citic,
19 Baceaquizquiat hire obrac eta hire charitatea eta cerbitzua eta fedea eta hire patientiá eta hire obrác: eta hire azquen obrác lehenac baino guehiago *dituc*.
20 Baina cerbait gauça appur badiát hire contra: ceren permettitzen baituc Iezabel emazteac (ceinec eguiten baitu bere buruä prophetessa) iracats deçan, eta ene cerbitzariac seduci ditzan, paillardatzera, eta idoley sacrificatzen diradenetaric iatera.
21 Eta eman diarocat dembora, bere paillar-

diçatic emenda ledinçát: eta eztuc emendatu.

22 Huná,nic diát hura eçarten ohean: eta harequin adulteratzen dutenac gucizco tribulatione handitan, baldin bere obretaric emenda ezpaditez.

23 Eta haren haourrac herioz hilen citiát, eta iaquinen dié Eliça guciéc ecen ni naicela* guelçurrunac eta bihotzac examinatzen ditudana: eta çuetaric batbedetari emanen diarocat bere obrén araura.

1.Sam.16.7. psal.7.10. Hiere.11.20. eta 17.10.

24 Baina çuey goitico Thyatiren çaretenoy erraiten drauçuet, Nor-ere *baitirade* doctrina haur eztutenac,eta Satanen barnatassunac eçagutu eztituztenac, dioiten beçala: eztut çuen gainera berce cargaric eçarriren.

25 Baina duçuena,educaçue ethor nadino.

26 Ecen victoria vkan duqueenari,eta ene obrác finerano beguiratu dituqueenari, emanen draucat bothere Gentilén gainean.

Psal.2.9.

27 * Eta gobernaturen dituque burdinazco cihorrez: eta chehecaturen dirade lurrezco vnciac beçala,nic-ere Aitaganic recebitu vkan dudan beçala:

28 Eta emanen draucat hari artiçarra.

29 Beharriric duenac, ençun beça cer Spirituac erraiten drauen Elicey.

## CAP. III.

1 *Iaincoaren çazpi spirituac.* 5 *Vicitzeco liburua.* 7 *Dauid-en gakoa.* 12 *Promessac.* 15 *Eppel.* 19 *Iaincoaren gaiztigamendua.* 21 *Christ Aitáren Thronoan.*

1 SArden *den* Eliçaco Aingueruari-ere ſcriba ieçóc, Iaincoaren çazpi ſpirituac eta çazpi içarrac dituenac gauça hauc erraitẽ citic, Baceaquizquiat hire obrác, ecen icena duc vici aicela, eta hila baitaiz.

2 Aicén iratzarri eta confirmaitzac goitico hiltzera doacenac: ecen hire obrác eztitiát perfect eriden Iaincoaren aitzinean.

3 Aicén bada orhoit nola recebitu eta ençun vkan duán: eta beguireçác, eta dolu bequic. Bada baldin veilla ezpadeçac ethorriren nauc hiregana * ohoina beçala, eta eztuc iaquinen cer orenez ethorriren naicén hiregana.

Berriz.16.15.
1.thes.5.2.
2.pier.3.10

4 Cembeit perſona-ere badituc *hic* Sarden bere abillamenduac ſatſutu eztituztenic, eta ebiliren baitirade enequin abillamendu churitan: ecen digne dituc.

5 Garaita vkanen duena hala veztituren datec abillamẽdu churiz, eta eztiát haren icena iraunguiren * vicitzeco liburutic, eta aithorturen diát haren icena neure Aitaren aitzinean, eta haren Ainguerüén aitzinean.

Berriz.20.12.
eta 21.27.
philip.4.4.

6 Beharriric duenac ençun beça cer Spirituac erraiten drauen Elicey.

7 Eta Philadelphian *den* Eliçaco Ainguerüari ſcriba ieçóc, Sainduac eta Eguiatiac, ceinec baitu Dauid-en gakoa, ceinec irequiten baitu, eta nehorc ez erſten: eta erſten baitu, eta

nehorc ez irequiten, gauça hauc erraiten citic:
8 Baceaquizquiat hire obrác: huná, eman vkã drauát eure aitzinera bortha irequia, eta nehorc ecin erts ceçaquec hura: cerẽ indar gutibat baituc *hic*, eta beguiratu baituc ene hitza, eta ezpaituc renuntiatu ene icena.
9 Huna, eçarriren citiát Satanen ſyna ogatic diradenac, bere buruäc Iudu eguiten baitituzté eta ezpaitirade, aitzitic gueçurra cioé: huna *bada*, eguinen diát ethor ditecen, eta adora deçaten hire oinén aitzinean, eta eçagut deçaten, ecen nic maite audala:
10 Ceren *hic* beguiratu vkan baituc ene patientiazco hitza, nic-ere hi beguiraturen aut tentationeco orẽ mundu guciaren gainera ethorteco denetic, lurreco habitanten phorogatzera.
11 Huná, baniatorquec ſarri: educac duána, nehorc har ezteçançát hire coroá.
12 Garaita vkanen duena, neure Iaincoaren templean habe eguinen diát, eta eztuc guehiagoric camporat ilkiren, eta ſcribaturen diát haren gainean neure Iaincoaren icena, eta neure Iaincoaren ciuitatearen icena, *cein baita*, Ieruſaleme berria, ene Iaincoaganic cerutic iautſia, eta neure icen berria.
13 Beharriric duenac ençun beça cer Spirituac erraiten drauen Elicey.
14 Laodicean *den* Eliçaco Aingueruäri-ere ſcriba ieçóc, Gauça hauc erraiten citic Amenec, teſtimonio fidelac eta eguiatiac, Iaincoaren creaturaren hatſeac:

15 Baceaquizquiat hire obrác,ecen ezaicela ez hotz ez eraquin: aihinz hotz edo eraquin.

16 Baina ceren eppel baitaiz, eta ezpaitaiz hotz ez eraquin, vomituren aut neure ahotic.

17 Ecen badioc, Abrats naiz, eta abraſtu naiz, eta eztut deuſen beharric: eta eztuc eçagutzen ecen dohacabe eta gaicho eta paubre eta itſu eta billuzgorri aicela.

18 Conſeillatzen aut eros deçán eneganic vrhe ſuz phorogatutic, abrats adinçát: eta abillamendu churriric, vezti adinçát, aggueri eztençat hire billuzgorritaſſunaren laidoa: eta collyrioz vncta ditzán eure beguiac, ikus deçançát.

19 * Nic maite ditudan guciac reprehenditzen eta gaztigatzen citiát: har eçac beraz zelo, eta dolu bequic.

*Pro.3.12. heb.12.5.*

20 Huná, borthán niagoc, eta bulkatzen diát: baldin cembeitec ençun badeça ene voza, eta borthá irequi badieçat, ſarthuren nauc harengana eta affalduren nauc harequin eta hura enequin.

21 Garaita vkanen duena iar eraciren diat neurequin, neure thronoan: nola nic-ere garaitu vkan baitut eta iarria bainago Aitarequin haren thronoan.

22 Beharriric duenac ençun beça cer Spirituac erraiten drauen Elicey.

## CAP. IIII.

*1 Bortha irequia ceruän. 2 Chriſt bere thronoan iarriric. 4 Hoguey eta laur Anciano. 6 Laur animal.*

1 G Auça hauen buruän beha neçan, eta huná, borthabat irequia ceruän: eta lehen ençun vkan nuen voza, *cen* enequin minço liçatẽ trompetta batena beçalaco, cioela, Igan adi huna, eta eracutsiren drauat cer gauça eguin behar diraden hemendic harát:

2 Eta bertan nincén spiritutan: eta huná, thronobat cẽ eçarria ceruän: eta *norbeit* throno gainean iarriric.

3 Eta iarriric çegoenac beth-ikartzez iaspe eta sardoin harria cirudien: eta cen thronoaren inguruän orçadarra smarauda cirudiela.

4 Eta thronoaren inguruän ciraden hoguey eta laur alki: eta alki gainetan ikus nitzan hoguey eta laur Anciano iarriric abillamendu churiz veztituac: eta cituztela bere buru gainetan vrrhezco coroác.

5 Eta thronotic ilkitẽ ciraden chistmistac: eta *ciradẽ* çazpi lampa suz çachetenic throno aitzinean, cein baitirade Iaincoaren çazpi spirituac.

6 Eta cen throno aitzinean beirazco itsasso crystala irudi çuen-bat: eta thronoaren erdian, eta thronoaren inguruän laur animal beguiz betheac aitzinean eta guibelean.

7 Eta lehen animalac lehoina irudi çuen, eta bigarren animalac aretzea irudi çuen, eta hirurgarren antmalac, çuen guiçonac beçalaco beguithartea, eta laurgarren animala hegaldaz dabilan arranoa beçalaco cen.

8 Eta laur animaléc çutén batbederac ceinec bere alde seirá hegal inguruän, eta barnean be-

guiz betheac ciraden eta etzuten paussuric egun ez gau, cioitela, * Saindu, saindu, saindu, Iainco Iaun botheregucitacoa, Cena, eta Dena, eta Ethorteco dena. *Esa.6.3.*

9 Eta animal hec emaiten ceraucatenean gloria eta ohore eta remerciamendu thronoan iarria cenari, secula seculacotz vici denari:

10 Egoizten cituzten bere buruäc hoguey eta laur Ancianoéc thronoan iarria cenaren aitzinera, eta adoratzen çutén vici dena secula seculacotz, eta eçarten cituzten bere coroác throno aitzinean, erraiten çutela,

11 * Digne aiz Iauna recebi decán gloria eta ohore eta puissança: ecen hic creatu dituc gauça guciác, eta hire vorondateagatic dituc, eta creatu içan dituc. *Berriz 5. 12.*

CAP. V.

*1 Liburu scribatua. 5 Iudaren leinutico lehoina. 6 Bildotsa hil. 8 Sainduén orationeac. 9 Cantu berria. 12 Laudorio Christi.*

1 G Vero ikus neçan thronoan iarriric cegoenaren escu escuinean liburu barnetic eta campotic scribatubat, çazpi ciguluz ciguilatua.

2 Eta ikus neçan Aingueru borthitzbat predicatzen çuela ocengui, Nor da digne irequi deçan liburuä, eta lacha ditzan haren ciguluac?

3 Eta nehorc, ez ceruän, ez lurrean, ez lurraren azpian ecin irequi ceçaqueen liburuä, ezeta hartara beha.

4 Eta nic anhitz nigar eguiten nuen, ceren ezpaitzén nehor digneric eriden içan liburuären

irequiteco,ez iracurtzeco,ez hartara behatzeco
5 Eta Ancianoetaric batec erran cieçadan, Ez-taguiála nigarric: huná, garaita dic Iudaren lei-nutico Lehoinac, Dauid-en çainac, liburuären irequiteco, eta harẽ çazpi ciguluén lachatzeco.
6 Eta beha neçan, eta huná thronoaren eta laur animálen artean, eta Ancianoén artean Bil-dots-bat cegoela *nehorc* hila beçala, cituela çaz-pi adar eta çazpi begui: cein baitirade Iaincoa-ren çazpi ſpiritu lur gucira igorriac.
7 Eta ethor cedin eta har ceçan liburuä thro-noan iarriric cegoenaren eſcu eſcuinetic.
8 Eta liburuä hartu çuenean, laur animaléc eta hoguey eta laur Ancianoéc bere buruäc egotz citzaten Bildotſaren aitzinera, cituztela ceinec bere guittarrác eta vrrhezco ampolác perfumez betheac, cein baitirade ſainduén orationeac:
9 Eta cantatzen çutén cantu berribat, cioitela, Digne aiz liburuären hartzeco, eta haren cigu-luén irequiteco: ecen ſacrificatu içan aiz, eta re-demitu garauzcac Iaincoari eure odolaz, leinu, eta mihi, eta populu, eta natione orotaric.
Leben 1. 6. 2 pier. 2. 9. 10 *Eta eguin guerauzcac gure Iaincoari re-gue eta ſacrificadore: eta regnaturen diagu lur-raren gainean.
11 Orduan ikus neçan, eta ençun neçan thro-noaren eta animalén eta Ancianoén inguruän, Dan. 7. 10. anhitz Aingueruren voza, *eta cen hayén con-tua hamar millatan hamar milla, eta millatan milla:
Leben 4. 11 12 Cioitela ocengui, *Digne da ſacrificatu içan den Bildotſa har deçã puiſſança, eta abraſtaſſun,

eta ſapientia, eta indar, eta ohore, eta gloria, eta laudorio.

13 Eta ceruän den creatura gucia, eta lurraren gainean, eta lurrarẽ azpian, eta itſaſſoan, eta hetan diraden gauça guciac ençun nitzan, erraiten çutela, Thronoan iarria denari eta Bildotſari laudorio, eta ohore, eta gloria, eta puiſſança, ſecula ſeculacotz.

14 Eta laur animalec erraiten çuten, Amen: eta hoguey eta laur Ancianoéc egotz citzaten bere buruäc bere beguithartén gainera, eta adora ceçaten vici dena ſecula ſeculacotz.

CAP. VI.

*1 Ciguluetaric bat irequi. 2 Çaldi churia. 4 Gorrhatſa. 5 Beltza. 8 Pherdatſa. Herioa. 9 Martyrioen arimác. 15 Lurreco reguén iciapena.*

1 GVero beha neçan, irequi vkan çuenean Bildotſac ciguluetaric lehena, eta ençun neçan laur animaletaric bat, cioela, igorciri voz anço, Athor eta ikuſſac.

2 Eta beha neçan, eta huná, çaldi churibat: eta harẽ gainean iarriric cegoenac çuen fletchabat, eta eman cequión hari coroabat, eta ilki cedin garaitzen çuela, eta garaita luençát.

3 Eta irequi vkan çuenean bigarren cigulua, ençun neçan bigarren animala, cioela, Athor eta ikuſſac.

4 Eta ilki cedin berce çaldi gorrhatsbat, eta haren gainean iarria cenari eman cequión lurretic

baquea ken ahal leçan,eta elkar hil leçaten : eta eman cequión hari ezpata handibat.
5 Eta irequi vkan çuenean hirurgarren cigulua, ençun neçan hirurgarren animala,cioela,Athor eta ikussac. Eta beha neçan, eta huná, çaldi beltzbat : eta haren gainean iarriric cegoenac, çuen balençabat bere escuan.
6 Eta ençun neçã vozbat laur animalén arteã, cioela, Chenicabat ogui bihi dinero batetan,eta hirur chenica garagar dinero batétan:eta mahatsarnoari eta olioari eztieceála calteric eguin.
7 Eta irequi vkan çuenean laurgarren cigulua, ençun neçan laurgarren animalarẽ voza,cioela, Athor eta ikussac.
8 Eta beha neçan,eta huná, çaldi pherdatsbat, eta haren gainean iarriric cegoenaren icena cen Herioa: eta Iffernua çarrayón hari,eta hæy emã cequién bothere lurraren laurdenarén gainean, hiltzeco ezpataz,eta gossetez,eta heriotzez,eta lurreco bassa bestiéz.
9 Eta irequi vkan çuenean borzgarren cigulua, ikus nitzan aldare azpian,Iaincoaren hitzagatic eta maintenitzen çuten testimoniageagatic heriotara eman içan ciradenén arimác:
10 Eta ceuden oihuz ocengui, cioitela, Noiz artean, Iaun sainduá eta eguiatiá, eztuc iugeatzen eta mendecatzen gure odola lurrean habitatzen diradenetaric?
11 Eta emã cequiztén batbederari arropa churiac, eta erran cequién reposa litecen oraino dembora appurbat, hayén cerbitzari quideac,

eta hayén anaye hec-ere beçala heriotara eman behar ciradenac compli litezqueno.

12 Guero beha neçan irequi vkan çuenean seigarren cigulua, eta huná, lur ikaratze handibat eguin cedin, eta iguzquia beltz cedin bilozco çacubat beçala, eta ilhargui gucia odola beçalaca cedin.

13 Eta içarrac cerutic eror citecen lurrera, ficotzeac bere fico chimalac iraizten dituen beçala haice handiz erabilten denean.

14 Eta ceruä retira cedin liburu itzultzen dēbat beçala: eta mendi eta isla guciac bere lekuetaric alda citecen.

15 Eta lurreco regueac, eta princeac, eta abratssac, eta capitainac, eta potētac, eta sclabo guciac, eta libre guciac gorde citecen lecétan eta mendietaco hartoquétan:

16 Eta erraiten cerauecen mēdiey eta harriey, *Eror çaitezte gure gainera eta estal gaitzaçue throno gainean iarria denaren beguithartetic, eta Bildotsaren hiratic.

Esa. 2.19. ose. 10.8. luc 23.30.

17 Ecen ethorri da haren hiraren egun handia: eta nor da iguriquiren ahal duena?

CAP. VII.

1 *Aingueruéc haiceac eduquiten.* 3 *Iaincoaren cerbitzariac seignalatu.* 14 *Bildotsaren odolean arropén ikutzea.* 17 *Iaincoac bere haourrén nigarra ichucatzen.*

1 ETa gauça hauén ondoan ikus nitzan laur Aingueru ceudela lurraren laur corneretan, çadutzatela lurreco laur haiceac, haiceric ezlaguiançát lurraren gainean, ez itſaſſoaren gainean, ez arbore baten-ere gainean.

2 Guero ikus neçan berce Ainguerubat igaiten cela iguzqui ialguitetic Iainco viciaren cigulua çuela: eta oihu eguin ciecén ocengui laur Ainguerù lurrari eta itſaſſoari calte eguitea emá içan çayeney,

3 Cioela, Eztaguieçuela calteric lurrari, ez itſaſſoari, ez arborey, gure Iaincoaren cerbitzariac bere belarretan ſeignala ditzaqueguno.

4 Eta ençun neçan ſeignalatu içan ciradenén contua, ehun berroguey *eta* laur milla ſeignalaturic Iſraeleco haourrén leinu gucietaric:

5 Iudaren leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Rubenen leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Gad-en leinútic, hamabi milla ſeignalaturic:

6 Aſer-en leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Nephthaliren leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Manaſſeren leinutic, hamabi milla ſeignalaturic:

7 Simeonen leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Leuiren leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Iſacharen leinutic, hamabi milla ſeignalaturic:

8 Zabulon-en leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Ioſeph-en leinutic, hamabi milla ſeignalaturic: Beniaminen leinutic, hamabi milla ſeigna-

laturic:

9 Gauça hauén ondoan beha neçan, eta huná, tropela handi nehorc cõta ecin ceçaqueen-bat, gende eta leinu eta populu eta mihi gucietaric, throno aitzinean eta Bildotsarẽ presentián ceudela, arropa luce churiz veztituac, eta palmác bere escuetan:

10 Eta oihuz ceuden ocengui, cioitela, Saluamendua gure Iainco throno gainean iarria denaganic eta Bildotsaganic.

11 Eta Aingueru guciéc assistitzen çuten thronoaren, eta Ancianoén eta laur animalén inguruän: eta bere buruäc egotz citzaten throno aitzinera bere beguithartén gainera, eta adora ceçaten Iaincoa,

12 Cioitela, Amen: laudorio, eta gloria, eta sapientia, eta esquer, eta ohore, eta puissança, eta indar gure Iaincoari secula seculacotz. Amen.

13 Orduan har ceçan hitza Ancianoetaric batec, ciostala, Arropa luce churiz veztitu hauc nor dirade, eta nondic ethorri dirade?

14 Eta erran nieçón, Iauna, hic badaquic. Eta erran cieçadan, Hauc dituc afflictione handitaric ethorri içã diradenac: eta ikuci vkan citié bere arropa luceac eta churitu Bildotsaren odoleã.

15 Halacotz dituc Iaincoarẽ throno aitzinean, eta hura cerbitzatzen dié egun eta gau haren templean: eta thronoan iarria dena habitaturen duc horiequin.

16 *Eztituc gosseturen ez egarrituren guehiagoric, ez horién gainera eztic ioren iguzquiac, *Esa.49.10.*

ez beroc batec-ere.

17 Ecen thronoaren erdian den Bildotsac bazcaturen citic eta guidaturen vretaco ithurri vicietara: *eta ichucaturen dic Iaincoac nigar vr gucia horién beguietaric.

Berr.21.4.
esa.25.8.

## CAP. VIII.

*3 Sainduén orationeac. 6 Çazpi Ainguerúec trompettác ioiten.*

1 ETa irequi vkan çuenean çazpigarren cigulua, silentio eguin cedin ceruän oren erditsubat.

2 Eta ikus nitzā çazpi Aingueru Iaincoaren aitzinean assistitzen dutenac, eta eman cequiztén çazpi trompetta.

3 Eta berce Ainguerubat ethor cedin eta egon cedin aldare aitzinean, vrrhezco encenserbat çuela: eta eman cequión anhitz perfum, Saindu gucién orationequin offrenda litzançát, throno aitzinean den aldare vrrhezcoaren gainean.

4 Eta igan cedin perfumén kea, Sainduén orationequin, Ainguerüaren escutic Iaincoaren aitzinera.

5 Eta har ceçan Ainguerüac encensera, eta bethe ceçan hura aldareco sutic, eta egotz ceçan lurrera: eta eguin citecen igorciriac eta vozac eta chistmistac eta lur ikaratze.

6 Eta çazpi trompettác cituztē çazpi Ainguerüac prepara citecen trompettáz ioitera.

7 Eta lehen Ainguerüac io ceçan trompettáz,

eta eguin ceçan babaçuça eta ſu odol nahaſteca, eta egotz citecen lurrera, eta arborén heren partea, erre cedin, eta belhar pherde gucia erre cedin.

8 Eta bigarren Aingueruäc io ceçan trompettáz, eta mendi handi ſuz erratzen cen-bat beçala egotz cedin itſaſſora: eta itſaſſoarẽ heren partea odol eguin cedin.

9 Eta hil cedin itſaſſoan ciraden creatura vicitze çutenen herén partea: eta vncien herén partea deſeguin cedin.

10 Guero herén Aingueruäc io ceçan trompettáz, eta eror cedin cerutic içar handi irachequibat, çucibat beçala, eta eror cedin fluuioen herén partera, eta ithur vretara.

11 Eta içarraren icena erraiten da, Abſinthio: eta vrén herén partea Abſinthio bilha cedin: eta anhitz guiçon hil cedin vretaric, ceren karmindu içan baitziraden *vrac.*

12 Guero Laurgarren Aingueruäc io ceçan trompettáz, eta io cedin iguzquiaren herén partea, eta ilharguiarẽ herén partea, eta içarren herén partea: hala non hayen herén partea ilhun baitzedin, eta egunaren herén parteac etzuen arguiric eguiten, ez gauärenac halaber.

13 Orduan ikus eta ençun neçan Aingueruba thegaldatzen cela ceruären erdiaz, cioela ocengui, Malediction, malediction, malediction lurreco habitantey, berce hirur Aingueruec ioren dituzten trompetta ſoinuacgatic.

CAP. IX.

2 *Abysmeco putzua.* 3 *Othiac.* 14 *Aingueruäc lachatu.* 16 *Çamaldunac gaichtoén punitzera igorri.* 17 *Çaldiac eta hayén puissançá.*

1 ORduan borzgarren Aingueruäc trompettáz io ceçan, eta ikus neçã içarbat cerutic lurrera eroria, eta eman cequión abysmeco putzuaren gakoa.

2 Eta irequi ceçan abysmeco putzua, eta altcha cedin putzuco kea, labe handi batetaco kea beçala: eta ilhund cedin iguzquia eta airea putzuco ketic.

3 Eta ketic ilki citecen othiac lurrera, eta bothere eman cequién lurreco scorpionéc duten beçalaco botherea.

4 Eta erran cequién ezlaguioten calteric lurreco belharrari ez eceinere pherderi, ez eceinere arboreri: baina solament Iaincoaren seignalea bere belarretan etzuten guiçoney.

5 Eta eman cequién ez hec hil litzaten, baina tormenta litzaten borz hilebethez, eta hayen tormentá *licen* scorpionezco tormentá guiçona io duqueenecoa beçala.

Lehen 6.16 esa.2.19. ose.10.8.

6 *Eta egun hetan guiçonéc herioa bilhaturen duté, eta eztuté eridenen: eta desiraturẽ duté hiltzera, eta herioac ihes eguinen du hetaric.

Sap.16.9.

7 *Eta othien formá *cen* çaldi bataillara apprestatuén irudicó, eta *ciraden* hayén buru gainetan vrrhea ciruditen coroac beçalacoac: eta hayén beguitharteac *ciraden* guiçonén beguitharteac beçala.

8 Eta

8 Eta cituzten biloac, emáztén biloac beçalá: eta hayén hortzac ciraden lehoinenac beçala.

9 Eta cituzté halacretac burdin halacretac beçala: eta hayen hegalén hotsa, anhitz, çaldic combatera laster eguiten duteneco carreta hotsa beçala.

10 Eta cituztén buztanac scorpionenac irudi: eta cituztén eztenac bere buztanetan: eta hayén botherea *cen* guiçoney calte eguitea borz hilebethez.

11 Eta çuten bere gaineco reguetzát abysmeco Ainguerua, ceinec baitu icen Hebraicoz, Abaddon, eta Grec-ez Apollyon *erran nahi baita deseguilea.*

12 Malediȼtionebat iragan da, eta huná, ethorten dirade oraino bi malediȼtione guero.

13 Orduan seigarren Ainglueruac io ceçan trõpettáz, eta ençun neçan vozbat Iaincoaren beguién aitzinean den aldare vrrhezcoaren laur adartetaric *proceditzen cenic,*

14 Ciotsala seigarrẽ Ainguerú trompettá çuenari, Lachaitzac laur Ainguerú Euphrateco fluuio handi gainean estecatuac diradenac.

15 Lacha citecen bada laur Ainguerüác, baitziraden appainduac orenecotz eta egunecotz eta hilebethecotz eta vrthecotz, hil deçatençát guiçonén herén partea.

16 Eta çaldizco armadaren cõtua cen hoguey millatan hamar milla: eta ençun neçan hayén contua.

17 Eta hunela ikus nitzã çaldiac visionean: eta

hayén gainetan iarriac ciradenéc, cituztela ſuzco eta hyacinthezco eta ſuphrezco halacretac: eta çaldién buruäc ciraden lehoinén buruäc beçala: eta hayén ahoetaric ilkiten cen ſu, eta ke, eta ſuphre.

10 Eta hirur gauça hauçaz hil içan cen guiçonén herén partea, *diot*, ſuaz, eta keaz, eta hayén ahotic ilkiten cen ſuphreaz.

19 Ecen hayén botherea cen hayén ahoan eta hayén buztanetan: ecé hayén buztanac ſugueac irudi ciradẽ, cituztela buruäc, ceinéz calte eguiten baitzuten.

20 Eta goitico guiçon plaga hauçaz hil etziradenac bere eſcuezco obretaric etzitecen emenda, adora ezlitzatençát deabruac *eta vrrhezco eta cilharrezco eta cobrezco eta harrizco eta çurezco idolác, ceinéc ecin ikus baiteçaquete ez ençun, eta ecin ebil baititezque:

*Pſal. 115.4 eta 133.15.*

21 Eta etzitecen emenda bere guiça-erhaitequetaric, ez bere poçoinquerietaric, ez bere pail lardicetaric, ez bere ohoinquerietaric.

## CAP. X.

*Ioänesec iretſi vkan çuen liburuä çaducan Ainguerüäz minçaturic, nola müduaren fina içanen den eracuſten, eta nola çaz pi igorcirien hotſac ciguilatu içan diraden declaratzen.*

1 ORduan ikus neçan berce Aingueru borthitzbat cerutic iau ſtẽ cela, hodeibatez inguratua ceinen buruan baitzén orçadarra: eta haren beguithartea

*cen* iguzquia beçala, eta haren oinac ſuzco habeac beçala. Eta çuen bere eſcuan liburutcho irequibat: eta eçar ceçan bere oin eſcuina itſas gainean, eta ezquerra lur gainean.

2 Eta oihu eguin ceçan ocengui, lehoin batec orroa eguiten duenean beçala: eta oihu eguin vkan çuenean, çazpi igorciric bere vozac pronuntia citzaten.

3 Eta çazpi igorciriéc bere vozac pronuntiatu vkan cituztenean, nic nahi nituen ſcribatu: baina ençun neçan vozbat cerutic cioſtala, Seignalaitzac çazpi igorciriéc pronuntiatu dituzten gauçác, eta hec eztitzála ſcriba.

4 Eta itſaſſoaren gainean eta lurraren gainean cegoela ikuſſi vkan nuen Ainguerüäc, altcha ceçan bere eſcua cerurá,

5 Eta iura ceçan ſecula ſeculacotz vici denaz, ceinec creatu baititu ceruä eta hartan diraden gauçác, eta lurra eta hartan diraden gauçác, eta itſaſſoa eta hartan diradẽ gauçác, ecen guehiago demboraric eztela içanen:

6 Baina çazpigarren Ainguerüären vozeco egunetan trompettáz ioiten haſſirẽ denean acabaturen datela Iaincoaren myſterioa, bere cerbitzari Prophetey declaratu vkan drauen beçala.

7 Eta cerutic ençun vkan nuẽ voza, berriz minça cedin enequin, eta erran ceçan, Habil, eta har eçac itſaſſoaren gainean eta lurrarẽ gainean dagoen Ainguerüären eſcuco liburutcho irequiá.

8 Eta ioannendin Ainguerüägana niotsala lidan liburutchoa. Eta erran cieçadan, Har eçac, eta irets eçac: eta hire ſabela karminduren dic: baina hire ahoan ezti içanen duc eztia beçalá.

9 Har neçan bada liburutchoa Ainguerüären eſcutic, eta irets neçan: eta cen ene ahoan eztia beçala ezti: baina iretſi vkan nuenean, ene ſabela karmin cedin.

10 Orduan erran cieçadan, Prophetizatu behar drauec berriz anhitz populuri, eta genderi, eta mihiri, eta regueri.

## CAP. XI.

*1, 19 Iaincoaren templea irequi. 3, 7 Iaunarenic bi teſtimonio beſtiác hil, 11 Guero reſuſcitatu içan dirade. 8 Sodoma eta Egypte. 12 Reſumác Chriſtendu. 16 Ancianoéc Iaincoa laudatzen.*

1 ETa emã cequidan canaberabat bergabat irudiric, eta preſenta cedin Ainguerubat, cioſtala, Iaiqui adi, eta neurt itzac Iaincoaren templea eta aldarea, eta hartan adoratzen dutenac.

2 Baina iraitzac campora temple lekoretic den ſalá, eta ezteçála hura neurt: ecen eman içan ciayec Gentiley, eta Ciuitate ſaindua ohondicaturen dié berroguey eta bi hilebethez.

3 Baina emanen diraueat hura neureric bi teſtimoniori, ceinéc, prophetizaturen baitute milla *eta* ber-ehun *eta* hiruroguey egunez, çacuz

veztituäc diradela.

4 Hauc dituc bí oliuác eta bi candelér lurrecō Iaunaren presentián daudenac.

5 Eta baldin nehorc hæy gaizquiric eguin nahi badraue, sua ilkiten duc hayén ahotic, eta iresten citic hayén etsayac: ecen baldin nehorc gaizquiric eguin nahi badraue, harc hunela heriotara eman behar dic.

6 Hauc dié bothere ceruären ersteco, vriric eztaguian hayén prophetiazco egunetan: eta dié bothere vren gainean, hayen odoletara conuertitzeco, eta lurrarē açotatzeco plaga oroz noizere nahi baituqueite.

7 Eta acabatu duqueiteneā bere testimoniagea abysmetic igaiten den bestiác, guerla eguinen dic hayen cōtra, eta garaithuren citic eta hilen:

8 Eta hayen gorputzac etzanen dituc Ciuitate handico placetan, cein deitzen baita spiritualqui Sodoma eta Egypte, non gure Iauna-ere crucificatu içan baita.

9 Eta ikussirē citié leinuëtacoéc, eta populuetacoéc, eta mihietacoéc, eta nationetacoéc, hayen gorputzac hirur egū eta erdiz, eta eztiquee permettituren hayen gorputzac eçar ditecen sepulturatan.

10 Eta lurreco habitātéc bozcario vkanen dié hayén gainean, eta atseguin harturē dié: eta presentac igorriren dirauecé elkarri: ceren bi Propheta hauc tormentatu dituqueizten lurrean habitant diradenac.

11 Baina hirur egun eta erdiren buruän vicitzeco ſpiritu Iaincoaganicoa hetara ſarthuren datec, eta egonen diratec bere oinén gainean, eta iciapen handi eroriren datec hec ikuſſiren dituqueiztenen gainera.

12 Guero ençun dié voz handibat cerutic, hæy dioſtela, Igan çaitezte huná: eta igan dituc cerura hodey batetan: eta ikuſſi citié bere etſayéc.

13 Eta oren hartá lur ikaratze hādi eguin içan duc: eta Ciuitatearen hamargarren partea erori içan duc, eta hil içan dituc lur ikaratze hartan çazpi milla guiçon, eta berceac icitu içan dituc, eta eman diraucoé gloria ceruco Iaincoari.

14 Bigarren maledictionea iragan içan da: eta huná hirurgarren maledictionea ethorriren da ſarri.

15 Eta çazpigarrē Ainguerüäc io ceçan trompettáz, eta voz handiac eguin citecen ceruän, cioitela, Eguin içan dirade mundu hunetaco reſumác, gure Iaunaren eta Chriſt harenaren *reſuma*, eta regnaturen du ſecula ſeculacotz.

16 Orduan hoguey *eta* laur Anciano Iaincoaren aitzinean bere alkietan iarriric ceudenéc, egotz citzaten bere buruäc bere beguithartén gainera, eta adora ceçaten Iaincoa,

17 Cioitela, Eſquerrac drauzquiagu hiri Iainco Iaun bothere-gucitacoá, Cein baitaiz, eta Baihincén, eta Ethorteco baitaiz, ceren hartu duán eure puiſſançá handia, eta *ceren* haſſi duán *eure* reſumá:

18 Eta aſſerretu içan dituc Gẽtilac, eta ethorrĩ içan duc hire hirá, eta hilén dembora, iugea ditecençát, eta eman dieceançát ſaria eure cerbitzari Prophetey, eta ſainduey, eta hire icenaren beldur diraden chipiey eta hãdiey: eta deſeguin ditzançát lurra deſeguiten dutenac.

19 Orduan irequi cedin Iaincoarẽ templea ceruän, eta ikus cedin haren alliançazco Arká haren templean: eta eguin cedin chiſtmiſt eta hots eta lur ikaratze, eta babaçuça handi.

## CAP. XII.

*Emazte ertzen cenaren celata cegoen dragoinaren cõtra Michelec victoria irabaci fidelén probetchutan.*

1 ETa ikus cedin ſigno hãdibat ceruän, Emazte iguzquiaz inguratubat, ceinen oinén azpiã baitzén ilharguia, eta buruän hamabi içarrezco coroabat.

2 Eta içorra içanez heyagoraz cegoen erdi beharrezco minez, eta tormenta iragaiten çuen erdi cedinçát.

3 Ikus cedin berce ſignobat-ere ceruän, eta huná, dragoin gorharats handibat, çazpi buru cituenic eta hamar adar: eta bere buruëtan çazpi diadema.

4 Eta haren buztanac tiratzẽ çuen ceruco içarrén herén partea, eta egotz citzã hec lurrera: eta gueldi cedin dragoina emazte erdi behar çuenaren aitzinean, erdi çatenean, haren haourra

irets leçançát.
5 Eta erd cedin ſeme ar batez ceinec gobernatu behar baitzituen natione guciac burdinazco berga batez: eta harrapa cedin haren haourra Iaincoagana eta haren thronora.
6 Eta emazteac ihes ceguian deſertu batetara, non baitu lekua Iaincoaz appainduric, han hura haz deçatençát milla eta ber-ehun eta hiruroguey egunez.
7 Eta eguin cedin bataillabat ceruän: Michele eta haren Aingueruäc bataillatzen ciraden dragoinaren contra, eta dragoina combatitzen cen eta haren Aingueruäc:
8 Baina etziraden borthitzenac içan, eta hayén lekua etzedin guehiagoric eriden ceruän.
9 Eta iraitz cedin dragoin handia, ſugue çahar hura, Deabru eta Satan deitzen dena, ceinec mundu gucia ſeducitzen baitu: iraitzi içan da *bada* lurrera, eta haren Aingueruäc harequin iraitz citecen.
10 Eta ençun neçan voz hãdibat cioela ceruän, Orain eguin da ſaluamẽdua, eta indarra, eta gure Iaincoren reſumá, eta Chriſt harenaren botherea: ecen gure anayén accuſaçalea iraitzi içan da, ceinec accuſatzen baitzituen gure Iaincoaren aitzinean egun eta gau.
11 Baina hec garaithu içan çaizquio Bildotſaren odolaren cauſaz eta bere teſtimoniageco hitzaren cauſaz, eta bere viciac eztituzte guppida vkan heriorano.

12 Halacotz çaitezte aleguera, ceruäc eta hetan habitatzen çaretenác. Malediĉtione lurreco eta itſaſſoco habitantey: ecen iautſi da deabrua çuetara, hira handiz betheric, nola baitaqui ecen dembora appurbat baduela.

13 Ikuſſi vkan çuenean bada dragoinac ecen iraitzi içan cela lurrera, perſecuta ceçan arraz erdi içan cen emaztea.

14 Baina eman içan çaizcan emazteari arrano hãdi batenic bi hegal, hegalda ledinçát ſugueareren aitzinetic deſertura, bere lekura, non hatzen baita dembora batetacotz eta demborétacotz eta demboraren erditacotz.

15 Eta iraitz ceçan ſugueac emaztearen ondoan berę ahotic vr fluuio bat beçala, hura harrapa eraci leçançát fluuioaz.

16 Baina aiuta ceçan lurrac emaztea, eta irequi ceçan lurrac bere ahoa, eta hurrupa ceçan dragoinac bere ahotic iraitzi vkan çuen fluuioa.

17 Orduan aſſerre cedin dragoina emaztearen contra, eta ioan cedin guerla eguitera haren hacico goiticoén, Iaincoaren manamenduac beguiratzen dituztenén eta Ieſus Chriſten teſtimoniagea dutenén contra.

18 Eta gueldi nendin itſaſſoco ſable gainean.

## CAP. XIII.

*1 Antechriſten guehientaſſuna. 7 Baina eztitu elegituac ſeducituren. 13 Haren ſignoac eta authoritatea. 18 Gauça hauén declarationea.*

1 ORduan ikus neçan beſtiabat itſaſſotic igaiten cela, çazpi buru eta hamar adar cituenic, eta bere adar gainetan hamar diadema : eta bere buru gainetan blaſphemiotaco icen-bat.

2 Eta *nic* ikuſſi vká nuen beſtiác Leoparta irudi çuen, eta haren oinac *ciraden* hartzarenac beçalaco: eta haren ahoa lehoinaren ahoa beçalaco : eta eman cieçon hari dragoinac bere puiſſançá, eta thronoa, eta bothere handi.

3 Eta ikus neçan haren buruetaric bat heriotara çauria beçala, baina haren heriotaraco çauria ſendatu içan cen : eta miraculuz cegoela lur gucia iarreiqui cequión beſtiari.

4 Eta adora ceçaten, beſtiari bothere eman ceraucan dragoina, eta adora ceçaten beſtiá, cioitela, Nor *da* beſtia irudi duenic ? haren contra nor combati ahal daite?

5 Eta eman cequión aho gauça handiac eta blaſphemioac pronuntiatzen cituena, eta eman cequión bothere berroguey *eta* bi hilebetheren complitzeco.

6 Eta irequi ceçan bere ahoa blaſphematzera Iaincoaren contra, blaſphema litzançát haren icena, eta haren tabernaclea, eta ceruän diradenac.

7 Eta eman cequión ſaindués contra-ere guerla eguitea, eta hæy garaitzea: eta emá cequión bothere leinu, eta mihi, eta natione ororé gainean.

8 Eta adoratzen çutén hura lurreco habitant guciéc, ceinén icenac ezpaitirade ſcribatuac, munduaren fundationetic hil içan den Bildotſaren vicitzeco liburuän

9 Baldin nehorc beharriric badu, ençun beça.

10 Baldin nehorc captiuitatera eramaiten badu, captiuitatera eramanen da *bera*: * baldin nehorc ezpataz hil badeça, behar da hura ezpataz hil dadin: hemen da ſainduén patientiá eta fedea.

Gen.9.6. mat.26.52

11 Guero ikus neçan, berce beſtiabat igaiten cela lurretic, eta cituē bi adar Bildotſarenac irudi: baina dragoina beçala minço cen.

12 Eta harc lehen beſtiarē bothere gucia exercitzen çuen haren preſentián: eta eguiten çuen, lurrac eta hartaco habitantéç adora leçaten leheneco beſtia hura, ceinen heriotaraco çauria ſendatu içan baitzén.

13 Eta ſigno handiac egui ten cituen, hambat non ſua cerutic lurrera eraits eraciten baitzuen guiçonén aitzinean.

14 Eta ſeducitzen cituen lurreco habitantac ſignoén cauſaz, ceinén eguitea eman içan baitzayón beſtiaren aitzinean: cioſtela lurreco habitantey, eguin lieçoten imaginabat beſtia hari, cein ezpataz çauri içan baitzén, baina viztu içan da.

15 Eta hari eman cequión, beſtiaren imaginari ſpiritu eman lieçón, eta beſtiaren imaginá minça ledin, eta eguin leçan, beſtiaren imaginá

adoratzen ezluten guciac, hil litecen.

16 Eta eguiten çuen, guciéc, chippiéc eta handiéc, abratséc eta paubréc, libréc eta sclaboéc hartzen baitzuten mercabat bere escu escuinean, edo bere belarretan.

17 Eta nehorc ecin eros leçan edo sal mercá luenec baicen, edo bestiaren icena, edo haren icenaren contua.

18 Hemen da sapientiá: adimenduric duenac conta beça bestiaren icená: ecen contua guiçonarena da, eta haren contua, sey ehun *eta* hiruroguey *eta* sey.

## CAP. XIIII.

*3 Iaincoaren haourrén consolationea. 8 Babyloneren erortea. 9 Bestiaren bandacoén punitionea. 13 Fidelén herioa dohatsu. 15 Vzta errequeitatzea, eta mendematzea.*

1 Rduan beha neçan, eta huná, Bildotsa cegoen Siongo mendi gainean, eta harequin ehun *eta* berroguey *eta* laur milla, çutela haren Aitaren icena scribatua bere belarretan.

2 Eta ençun neçan vozbat cerutic vr handién hotsa beçala, eta igorciri handi baten hotsa beçala: eta ençun neçan bere guitarrac ioiten cituzten guittarrarién soinubat:

3 Eta cantatzen çuten quasi cantu berribat

throno aitzinean, eta laur animalén, eta Ancianoén aitzinean:eta nehorc ecin ikas ceçaqueen cantua ehũ *eta* berroguey *eta* laur milléc baicen, cein baitirade lurretic erossiac:

4 Hauc dirade emaztequin satsutu eztiradenac: ecen virgina dirade: hauc dirade Bildotsari darreitzanac norat-ere ioan baitadi: hauc dirade guiçonén arteric erossiac, primitia Iaincoari eta Bildotsari *sanctificatuac*.

5 Eta hayén ahoan ezta eridẽ enganioric: ecen macula gabe dirade Iaincoaren throno aitzinean.

6 Guero ikus neçan berce Ainguerubat ceruären arteaz hegaldatzen cela, Euangelio eternala çuela, euangeliza liecençat lurreco habitantey, eta natione, eta leinu, eta mihi, eta populu guciari:

7 Cioela ocengui, * Çareten beldur Iaincoaren, eta hari gloria emoçue:ecen ethorri da haren iugemenduaren ordua : eta adora eçaçue * ceruä eta lurra eta itsassoa eta vr ithurriac eguin dituena.

Psal.145.6

Act.14.15

8 Eta berce Ainguerubat iarreiqui cequión, cioela, * Erori da erori Babylon, ciuitate handi hura, ceren bere paillardiçaren hirataco mahatsarnoaz natione guciac edaran vkan baititu.

Berriz.18.2
esa.21.9.
hiere.51.8.

9 Eta heren Ainguerua iarreiqui cequién, cioela ocengui, Baldin nehorc adora badeça bestiá eta haren imaginá, eta har badeça haren mercá

bere belarrean edo bere eſcuan,

10 Harc-ere edanen du Iaincoaren hiraco mahatſarnotic, *bay*, mahatſarno pur haren hiraco copara huſtutic: eta tormentaturen da ſuz eta ſuphrez Aingueru ſainduén aitzinean eta Bildotſaren aitzinean.

11 Eta hayén tormentaco kea altchaturen da ſecula ſeculacotz: eta eztute vkanen pauſſuric ez egun ez gau adoratzen duténéc beſtiá eta haren imaginá, eta baldin nehorc har badeça haren icenaren mercá.

12 Hemen da ſainduén patientiá: hemen *dirade* Iaincoaren manamenduac eta Ieſuſen fedea beguiratzen dituztenac.

13 Orduan ençun neçan vozbat cerutic, cioſtala, Scriba eçac, Dohatſu *dirade* Iaunean hiltzen diraden hilac hemendic harat. Bay, dio Spirituác: ecen repoſatzen dirade bere nequetaric, eta bere obrác iarreiquiten çaizté.

14 Eta beha neçan, eta huná hodey churibat: eta hodey gainean *norbeit* cegoen iarriric guiçona irudi çuenic, çuela bere buru gainean vrhezco coroabat, eta bere eſcuan iguitey çorrotzbat.

15 Eta berce Ainguerubat ilki cedin templetic, oihuz çayola ocengui, hodey gaineã iarriric cegoenari, *Eçarrac eure iguiteya, eta vztá errequeita eçac: ecen ethorri çaic errequeitatzeco ordua: ecen lurreco *vztá çorhitu duc.

*Ioel.3.13.*

*Mat.13, 39.*

16 Orduan eçar ceçan hodey gainean iarriric

cegoenac, bere iguiteya lurrera: eta errequeita cedin lurra.

17 Eta berce Ainguerubat ilki cedin ceruco templetic, çuela harc-ere iguitey çorrotzbat.

18 Eta berce Ainguerubat ilki cedin aldaretic, çuela bothere ſuaren gainean, eta ocengui oihu eguin cieçón iguitey çorrotza çuenari, cioela, Eçarrac eure iguitey çorrotza, eta mendemaitzac lurreco mahaſtico mulkoac: ecen hartango mahatſaç onthu dituc.

19 Eta eçar ceçan Ainguerüäc bere iguitey çorrotza lurrera, eta mendema ceçan lurreco mahaſtia, eta igor ceçan Iaincoaren hiraren laco handira.

20 Eta lacoa aurizqui cedin Ciuitatetic campoan: eta ilki cedin odol lacotic çamarién bridetarano, milla *eta* ſey ehun eſtadiotan.

## CAP. XV.

*1 Iaincoaren hiraren plagác. 2 Beſtiaren abominationetaric preſeruatu içan diradenén eſquer emaitea. 6 Çazpi Ainguerru, çazpi plaga, çazpi ampola.*

1 G Vero ikus neçã berce ſignobat ceruän handiric eta miraculuzcoric, Çazpi Ainguerru, cituztela azquen çazpi plagác ecẽ heçaz da Iaincoaren hira complitu.

2 Eta ikus neçan beirazco itſaſſobat beçala ſuz nahaſtecatua: eta victoria eraman vkan çutenac beſtiaganic, eta haren imaginaganic, eta haren mercaganic, eta haren icenaren contuaganic, ceudela itſaſſo beirazco *irudian*, eta cituztela Iaincoaren guittarrác:

3 Eta cantatzen çutén Iaincoaren cerbitzari Moyſeſen canticoa, eta Bildotſaren canticoa, cioitela, Hādi eta miraculuzco dituc hire obrác, Iainco Iaun bothere gucitacoa: *iuſto eta eguiazco dituc hire bideac, ſaindurén Regueá.

Pſal. 146.6

4 *Nor ezta hire beldur içanen, Iauna, eta *nore* baeztu glorificaturen hire icena? ecen ſaindu bakoitza *aiz hi*: ecen gende guciac ethorriren dituc, eta adoraturen dié hire aitzinean: ceren hire iugemenduac manifeſtatu içan baitirade.

Hiere.10.7

5 Eta gauça hauén buruán beha neçan, eta huná, irequi cedin teſtimoniageco Tabernaclearen templea ceruän.

6 Eta ilki citecen templetic çazpi plagác cituzten çazpi Aingueruäc, veztituric liho purez eta churiz, vrrhezco guerricoez bulhar inguruëtan guerricatuac.

7 Eta laur animaletaric batec eman cietzén çazpi Ainguerucy çazpi ampola vrrhezcoric, Iainco ſecula ſeculacotz viciaren hiraz betheac.

8 Eta bethe cedin templea Iaincoaren maieſtatetic, eta haren puiſſançatic *ilkiten cen* keaz: eta nehor ecin ſar ceiten templean çazpi Aingueruén çazpi plagác compli litezquenó.

CAP. XVI.

## CAP. XVI.

*Çazpi Ainguerüäc, eta Iaincoarē hirazco çazpi ampolác. 5 Iaincoaren haourrén erhailén gaineā Iaincoarē iugemendua. 9 Infidelén blasphemioa. 10 Bestiaren thronoa ilhundu. 13 Princeac seducitzen dituzten spirituac. 17 Hirién eta herrién obstinationea eta sunsimendua. 18 Chistmist, igorciri, lur-ikaratze eta babaçuça infidelén gainera, 19 Eta principalqui Babyloneren gainera mendequiorequin.*

1 ORduan ençun neçan voz handibat templetic, ciostela çazpi Ainguerüëy, Çoazte eta issuritzaçue Iaincoarē hirarē çazpi ampolác.

2 Ioan cedin bada lehen *Ainguerüä*, eta issur ceçan bere ampolá lurrera, eta eguin cedin plagabat gaitzic eta damutacoric bestiaren mercá çuten guiçonén contra, eta haren imaginá adoratzen çutenén contra.

3 Eta bigarren Ainguerüäc issur ceçan bere ampolá itsassora, eta sarrasquibaten odola beçalaca cedin eta itsassoco arima vici gucia hil cedin.

4 Eta herén Ainguerüäc issur ceçan bere ampolá fluuioetara eta vr ithurrietara, eta odol bilha citecen.

5 Eta ençun neçan vretaco Ainguerüä, cioela, Iusto aiz Iauna, Aicena eta Incena eta Saindua: ceren gauça hauc iugeatu baitituc:

6 Ceren Sainduén eta Prophetén odola iſſuri vkan baituté, *hic*-ere odol eman vkan drauec edatera: ecen digne dituc.

7 Eta ençun neçan bercebat Sainctuariotic, cioela, Segurqui, Iainco Iaũ bothere gucitacoá, eguiazco eta iuſto dituc hire iugemenduac.

8 Guero laurgarren Aingueruäc iſſur ceçan bere ampolá iguzquira, eta hari eman cequión guiçonén ſuz erratzea.

9 Eta erre citecen guiçonac bero handiz, eta blaſphema ceçaten, plaga hauén gaineã bothere duen Iaincoaren icena: eta etzitecen emenda hari gloria eman lieçotençát.

10 Guero borzgarren Aingueruäc iſſur ceçan bere ampolá, beſtiaren throno gainera: eta eguin cedin haren reſumá ilhumbeçu: eta maſtacatzen cituztén bere mihiac dolorearen hãdiz.

11 Eta blaſphema ceçaten Iainco cerucoa bere doloreacgatic eta çauriacgatic: eta etzitecén emenda bere obretaric.

12 Guero ſeigarren Aingueruäc iſſur ceçan bere ampolá Euphrateſco fluuio handira: eta agor cedin hartaco vra, appain ledinçát iguzqui ilkite aldeco Reguén bidea.

13 Eta ikus nitzan *ilkiten* dragoinaren ahotic, eta beſtiaren ahotic, eta propheta falſuén ahotic, hirur ſpiritu ſatſu iguelén irudicoric:

14 Ecen badirade deabruén ſpiritu, ſignoac eguiten dituztenac, eta lurreco eta mundu orotaco reguetera ioaiten diradenac hec bil ditza-

tençát Iainco bothere gucitacoaren egun handi hartaco bataillara.

15 *(Huná, ethorten naiz ohoina beçala: dohatsu *da* iratzarri dagoena, eta bere abillamenduac beguiratzen dituena, billuzgorriric ebil eztadinçát, eta nehorc haren laidoa ikus eztecançát)

Leben.3.3. mat.24.44 luc,12.39.

16 Eta bil citzaten, Hebraicoz Arma-gedon deitzen den lekura.

17 Guero çazpigarren Ainguerua̋c issur ceçan bere ampolá airera: eta ilki cedin voz handibat ceruco templetic throno aldetic, cioela, Eguin da.

18 Orduan eguin cedin chistmist eta hots eta igorciri: eta lur ikaratze handia eguin cedin, nolaçoric ezpaita içan guiçonac lurraren gainera diradenaz gueroztic, lur ikaratzetic *diot* hain handiric.

19 Eta eguin cedin ciuitate handi hura hirur partetara, eta Gentilén ciuitateac eror citecen, eta Babylon handiá ethor cedin memoriotara Iaincoaren aitzinean, * hari bere hiraten indignationezco mahatsarno coparen emaiteco.

Hiere.25. 15.

20 Eta issla oroc ihes eguin ceçan, eta mendiac etzitecen guehiagoric eriden.

21 Eta harriabar handiric talentbat beçalacoric iauts cedin ceruti guiçonetara. eta blasphema ceçaten Iaincoa guiçonéc harriabarrezco plagaren causaz: ecen * harc eguin çuen plagá gucizco handiá içan da.

*harc, harriabarrac.

## CAP. XVII.

*1 Paillarda handiaren descriptionea eta abominationea. 7 Haren declarationea, eta nola deseguin içan den. 13 Lurreco regue, hura abrastu, çutenéz.*

1 ORduan ethor cedin çazpi ampolác cituztén çazpi Ainguerüetaric bat, eta minça cedin enequin, cioſtala, Athor, eracutſiren drauat anhitz vren gainean iarriric dagoen paillarda handiaren damnationea:

2 Ceinequin paillardatu baitute lurreco reguéc, eta haren paillardiçazco mahatſarnoaz horditu içan baitirade lurreco habitantac.

3 Eta ſpirituz deſertu batetara eraman nençan: eta ikus neçã emaztebat, beſtia eſcarlata coloretaco, blaſphemiotaco icenez bethe, çazpi buru eta hamar adar cituen baten gainean iarria.

4 Eta emaztea *cen* abillatua pourpraz eta eſcarlataz, eta vrrheſtatua vrrhez, eta *appaindua* harri preciatuz eta perlaz, copa vrrhezcobat bere paillardiçaco abominationez eta ſatſutaſſunez bethea bere eſcuan çuela.

5 Eta bere belarrean icen-bat ſcribaturic, Myſterio, Babylon handia, lurreco paillardicén eta abominationén amá.

6 Eta ikus neçan emaztea ſainduén odolaz, eta Ieſuſen martyroén odolaz horditua, eta hura ikuſſiric, mireſte handiz mirets neçan.

7 Eta erran cieçadã Ainguerüäc, Cergatic mi-

ſeſten duc? nic erranen drauat emaztearen, eta hura ekarten duen beſtia çazpi burutacoaren eta hamar adarretacoaren myſterioa.
8 Ikuſſi vkan duán beſtiá, içan duc, eta eztuc *guehiagoric:* età igaiteco duc abyſmetic, eta perditionetara ioaiteco: eta miretſiren dié lurreco habitantéc (ceinén icenac ezpaitirade ſcribatuac vicitzeco liburuän munduaren hatſeandanic) dacuſſatenean beſtiá, cein baitzén, eta ezpaita, eta alabaina baita.
9 Hemen da adimendu ſapientia duena. Çazpi buruäc, çazpi mendiac dirade ceinén gainean emaztea iarria baita.
10 Eta regueac çazpi dirade: borzac erori dirade, eta bat bada, bercea ezta oraino ethorri: eta dathorrenean behar du harc *dembora* appurbat egon.
11 Eta beſtiá cein baitzén, eta ezpaita, hura çortzigarren *reguea* da, eta çazpietaric da, eta galtzera doa.
12 Eta hamar adar ikuſſi dituánac, hamar regue dituc ceinéc reſumá ezpaitute oraino hartu, baina bothere regue beçala oren batez harturen dié beſtiarequin.
13 Hauc conſeillu berbat dié, eta bere puiſſançá eta authoritatea beſtiari emanen diarocoé.
14 Hauc bildotſaren contra combatituren dituc, eta Bildotſa garaithuren ciayec: * ecen iaunén Iaũ duc, eta reguén Regue: eta harequin diradenac dituc deithuac eta elegituac eta fidelac.
15 Guero erran cieçadan, Ikuſſi dituán vrac,

*Berriz. 19. 16. 1. tim. 6. 15*

non paillardá iarria baita, dituc populuac, eta tropelac, eta gendeac, eta mihiac.
16 Eta bestián ikussi dituán hamar adarrac dituc paillardari gaitz eritziren draucatenac, eta hura desolaturen dié eta haren haraguia ianen eta bera, suan erreren dié.
17 Ecen Iaincoac eçarri dic hayén bihotzetan, eguin deçaten harc placer duena, eta consenti ditecen, eta eman dieçoten bere resumá bestiari Iaincoaren hitzac compli daitezqueno.
18 Eta ikussi vkan duän emaztea duc Ciuitate handi hura ceinec baitu bere resumá lurreco reguén gainean.

CAP. XVIII.

*2 Babyloneren erortea eta deseguitea. 9 Infidelén harçazco vrthueria, 15 Principalqui harc abrastu dituqueenena. 20 Baina fidelac aleguераturen dirate. 21 Haren deseguitea nolaco içanen. 24 Hartan eridenen heriotara eman diratenén odola.*

1 ETa gauça hauen ondoan ikus neçá berce Ainguerubat iausten cela cerutic, bothere hádia çuela: eta argui cedin lurra haren gloriáz:
2 Eta oihuz iar cedin botheretsuqui voz handiz, cioela, * Erori da, erori da Babylon hádi hura, eta eguin içan da deabruén habitatione, eta spiritu satsu ororen eta hegaztina satsu eta execrable ororen retiragune:
3 Ecen haren paillardiçaren hirazco mahatsar-

Lehen 14.8
Esa. 21.9.
Hiere. 51.8

notic edan vkan dute gende guciéc, eta lurreco reguéc harequin paillardatu vkan dute: eta lurreco merkatariac haren delicietaco abraſtaſſunetic abraſtu içan dirade.

4 Eta ençun neçan berce vozbat cerutic, cioela, Ilki çaitezte hartaric ene populuá, haren bekatuetan participant etzaretençát, eta haren plaguetaric recebi ezteçaçuençát.

5 Ecen haren bekatuac elkarri iarreiqui içan çaizca cerurano, eta orhoit içan da Iaincoa haren iniquitatéz.

6 Renda ieçoçue harc eguin vkan drauçuen beçala: eta paga ieçoçue doblea bere obrén araura: harc erautſi vkan drauçuen copán eman ieçoçue doblea.

7 Cembat bere buruä glorificatu vkan baitu, eta deliciotan içan baita, emoçue hambat tormenta eta nigar: ecen bere bihotzean erraiten du, *Iarria nago reguina, eta eznaiz alhargun, eta vrthueriaric eztacuſquet.

*Eſa.47.8.*

8 Halacotz egun batez ethorriren dirade haren plagác, herio eta vrthueria eta goſſete: eta ſuz erreren da: ecen Iainco Iauna borthitz da, ceinec iugeaturen baitu hura.

9 Eta nigar eguinen duté harçaz eta deithore haren gainean lurreco reguéc, harequin paillardatu dutenéc eta delicioſqui vici içan diradenéc, dacuſqueitenean haren erratzeco kea:

10 Vrrun daudela haren tormentaren beldurrez, dioitela, Elas, elas, Babylon ciuitate handiá,

ciuitate borthitzá nola hire condemnationea oren batez ethorri içan den!

11 Lurreco merkatariéc-ere nigar eguinen duté eta deithore haren gainean, ceren nehorc ezpaitu hayén marchandiçatic erosten guehiagoric:

12 Marchandiça vrrhezcoric, eta cilharrezcoric, eta harri preciatuzcoric, eta perlazcoric, eta crespazcoric, eta pourprezcoric, eta cetazcoric, eta escarlatazcoric, eta vssain onetaco çur mota gucitacoric, eta yuoirezco vnci gucitacoric, eta vnci gucizco çur preciatuzcoric, eta cobrezcoric, eta burdinazcoric, eta marbrezcoric:

13 Eta canela, eta vssain on, eta vnguentu, eta encensu, eta mahatsarno, eta olio, eta irin flore fin, eta ogui bihi, eta behor eta ardi, eta çaldi, eta carriot, eta sclabo, eta guiçonén arima.

14 (Hire arimaren desirezco fructuac ioan ditun hireganic, eta gauça delicatu eta excellent guciac galdu içan çaizquin: eta eztitun guehiagoric gauça hec eridenen)

15 Gauça hauén merkatariac *bada* abrastu içanic vrrun harenganic egonen dirate haren tormentaren beldurrez, nigarrez eta deithorez daudela.

16 Eta dioitela, Elas, elas, Ciuitate handia, cein baitzén crespaz veztitua, eta pourpraz, eta escarlataz, eta baitzén vrrhestatua vrrhez, eta appaindua harri preciatuz eta perlaz: nola oren batez desolatu içan dirade hain abrastassun handiac?

17 Vnci pilotu guciac-ere, eta vncietaco compainia gucia, eta marinerac eta cembatec-ere itſaſſoan baitiharducate, vrrun egonen dirade.

18 Eta haren erratzeco kea dacuſſatenean, heyagoraz iarriren dirate, dioitela, Cein *ciuitate cen* ciuitate handi hunen pareric?

19 Eta errhauts egotziren duqueite bere buru gainetara, eta heyagora eguinen duqueite nigarrez eta deithorez daudela, eta dioitela, Elas, elas, ciuitate handiá, ceinetan abraſtu içan baitziraden itſaſſoan vnciric çuten guciac, haren magnificentia handitic, nola oren batez deſeguin içan den!

20 Alegueradi haren gainean ceruá, eta *çuec* Apoſtolu eta Propheta ſainduác: ecen Iaincoac iugeatu vkan du çuen cauſá, harçaz den becembatean.

21 Guero har ceçan Aingueru borthitzbatec harribat, errota harri handibat beçalacoric, eta iraitz ceçan itſaſſora, cioela, Hunelaco indarrez iraitziren da Babylone ciuitate handia, eta ezta guehiagoric eridenen.

22 Eta guittarrarién, eta muſicianoén, eta chirula, eta trompetta ſoinularién vozic eztatec hitan guehiagoric ençunen: ez cer-ere officiotaco den officieric batre eztatec guehiagoric hitan eridenen: eta errota harriaren hotſa eztatec guehiagoric hitan ençunen:

23 Eta candela arguiac eztic arguiric eguinen hitan guehiagoric, eta ſpoſoaren eta ſpoſaren voza eztuc hitan guehiagoric ençunen, ceren

hire merkatariac lurreco prince baitziraden, ceren hire poçoinqueriéz seducitu içan baitirade natione guciac.

24 Baina hartá Prophetén eta Sainduén odola eriden içan da, eta lurraren gainean heriotara eman içan diraden gucienena.

CAP. XIX.

*1 Laudorio Iaincoari. 7 Elegituén bozcarioa eta dohainontassuna. 10 Ainguerüäc adoratu içatea refusatzen. 11 Christen gloriá eta maiestatea. 17 Iaincoaren banquet handiratco deya. 20 Bestiaren eta harenén deseguitea.*

1 GAuça hauen ondoan ençun neçan tropel anhitzen voz hãdibat ceruän, cioela, Halleluia: saluatione, eta gloria, eta ohore, eta puissança gure Iainco Iaunari dagoca.

2 Ecen eguiazco dirade eta iusto haren iugémenduac: ceren bere paillardiçáz lurra corrumpitu vkan duen paillarda handiaz iustitia eguin vkan baitu, eta bere cerbitzarién odola haren escuetan mendecatu vkan baitu.

3 Eta berriz erran ceçaten Halleluia: eta haren kea igan cedin secula seculacotz.

4 Eta hoguey eta laur Ancianoéc eta laur animaléc egotz citzaten bere buruäc bere beguithartén gainera, eta adora ceçaten throno gainean iarriric dagoen Iaincoa, cioitela, Amen, Halleluia.

5 Eta vozbat thronotic ilki cedin, cioela, Laudaeçaçue gure Iaincoa haren cerbitzari guciéc, eta haren beldur çareten chipiéc eta handiéc,

6 Guero ençun neçan tropel hãdi baten hotsã beçala, eta vr handién hotsa beçala, eta igorciri handién hotsa beçala, cioitela, Halleluia, ecen regnatu vkan du gure Iainco Iaun bothere gucitacoac.

7 Boz eta aleguera gaitecen, eta demogun hari gloria: ecen ethorri dirade Bildotsaren ezteyac, eta haren emaztea appaindu da.

8 Eta eman içan çayó crespe purez eta arguitzen duenez vezti ledin: ecen crespá, Sainduén iustificationeac dirade.

9 Orduan errã cieçadan, Scriba eçac, *Dohatsu dirade Bildotsaren ezteyetaco affarira deithuac. Erran cieçadan halaber, Iaincoaren hitz hauc eguiazco dituc.

Mat. 22.2

10 *Eta egotz neçan neure buruä haren oinén aitzinera hura adora neçançát: eta erran cieçadan, Beguirauc eztaguián: hire cerbitzari quide nauc, eta hire anayén, ceinéc baitute Iesusen testimoniagea. Iaincoa adora eçac: ecen Iesusen testimoniagea duc prophetiazco Spiritua.

Berr. 22.9.

11 Guero ikus neçan ceruä irequiric, eta huná, çaldi churibat, eta haren gainean iarriric cegoena deitzen cen Fidela eta Eguiatia, eta iustoqui iudicatzen duena eta combatitzen dena.

12 Eta haren beguiac *ciraden* su-garra beçala, eta haren buru gainean cen anhitz diadema, eta *çuen* scribuz icena harc berac baicen eçagutu vkan eztuena:

13 *Eta cen odolez tintatu arropa batez veztitua: eta harẽ icena deitzen da IAINCOAREN HITZA.

Esa. 63.2.

14 Eta ceruän diraden armadác iarreiquiten çaizquión çaldi churiz, veztituric creſpa churiz eta purez.

15 Eta haren ahotic ilkiten cen ezpata çorrotzbat, harçaz io ditzançát nationeac: *ecen harc gobernaturen ditu hec burdin berga batez: eta hura da Iainco bothere gucitacoaren hiſſizco eta hirazco mahatſarno lacóa aurizquiren duena.

*Pſal.2.9.*

16 Eta çuẽ bere veztidurán eta ichterrean ſcribuz icen haur, *REGVEN REGVEA, ETA IAVNEN IAVNA.

*Lehẽ 17.14* *1.tim.6.15*

17 Guero ikus neçan Ainguerubat iguzquian barna cegoela, ceinec oihu eguin baitzeçan ocengui, cioſtela ceruären arteaz hegaldatzen ciraden chori guciey, Çatozte, eta bil çaitezte Iainco handiaren affarira,

18 Ian deçaçuençát reguén haraguia, eta capitainén haraguia, eta borthitzen haraguia, eta çaldién haraguia, eta hayén gainean iarriric daudenena, eta libre eta ſclabo, chipi eta handi gucién haraguia,

19 Guero ikus nitzan beſtiá eta lurreco regueac eta hayen armadác bilduric guerla eguitera çaldi gainean iarriric cegoenaren contra eta haren armadaren contra.

20 Eta beſtiá hatzaman cedin, eta propheta falſu haren aitzinean ſignoac eguin cituena harequin, *ceinéz ſeducitu baitzituen beſtiaren mercá hartu vkan çutenac, eta haren imaginá adoratu vkan çutenac: viciric iraitzi içan dirade

*ceinéz, ſignoéz.*

bi hauc ſuzco ſtang ſuphrez çachecan batetara:

21 Eta goiticoac hil içan ciraden çaldi gainean iarriric cegoenaren ahotic ilkiten cen ezpatáz: eta chori guciac aſſe citecẽ hayén haraguietaric.

CAP. XX.

*1 Satan eſtecatu. 7 Guero lachatu. 4 Iaincoaren hitzagatic hil içan diradenén arimác. 12 Vicitzeco liburuä. 13 Iudicioa.*

1 GVero ikus neçan Ainguerubat iauſten cela cerutic abyſmeco gakoa çuela, eta cadena handibat bere eſcuan.

2 Eta hatzamã ceçan dragoina, ſugue çaharra, cein baita deabruä eta Satan, eta eſteca ceçan hura milla vrthetacotz.

3 Eta irion ceçan hura abyſmera, eta erts ceçan hura, eta ciguila ceçan haren gaïnean, gendeac guehiagoric ſeduci eztitzançát, milla vrtheac compli daitezqueno: eta guero behar da lacha dadin dembora gutibatetacotz.

4 Guero ikus nitzan alkiac, eta iar citecẽ hayén gainetan *gendeac*, eta iugémẽdua eman cequién: eta Ieſuſen teſtimoniageagatic, eta Iaincoaren hitzagatic buruäc edequi içan çaiztenén arimác, eta ceinéc ezpaitzuten adoratu beſtiá ez haren imaginá, eta ezpaitzutén hartu vkan haren mercá bere belarretan edo bere eſcuetan, eta vicico dirade eta regnaturen duté Chriſtequin milla vrthez.

5 Baina goitico hilac eztirade reſuſcitaturen milla vrthe compli daitezqueno: haur da lehen

reſurrectionea.

6 Dohatſu eta ſaindu da lehen reſurrectionean parte duena, hayén gainean bigarren herioac eztu bothereric: baina içanen dirade Iaincoaren eta Chriſten ſacrificadore, eta regnaturen duté harequin milla vrthez.

7 Eta complitu diratenean milla vrtheac lacharturen date Satan bere preſoindeguitic.

8 Eta ilkiren date ſeduci ditzançát lurraré laur *Ezech.38.2* cornueretan diradé nationeac, *Gog eta Magog, hec congrega ditzançát bataillara: ceinén contua baita itſaſſoco ſablea beçala.

9 Eta igan citecen lurraren çabaltaſſunera, eta ingura ceçaten Sainduén campoa, eta Ciuitate maitea: baina iauts cedin ſua Iaincoaganic cerutic, eta irets citzan hec.

10 Eta hec ſeducitzé cituen deabrua, iraitz cedin ſuzco eta ſuphrezco ſtagnera, non *baitirade* beſtiá eta propheta falſua: eta tormentaturen baitirade egun eta gau ſecula ſeculacotz.

11 Guerò ikus neçan throno handi churibat, eta norbeit haren gainean iarria, ceinen aitzinetic ihes eguin baitzeçaten lurrac eta ceruäc, eta etzedin hayendaco lekuric eriden.

12 Eta ikus nitzan hilac chipiac eta handiac Iaincoaren aitzinean ceudela, eta liburuäc irequi citecen: eta berce *liburubat irequi cedin, *Lehen 3.5. ber 21.27. philip.4.3.* cein baita vicitzeco *liburua*: eta iugea citecen hilac liburuëtan ſcribatuac ciraden gaucetaric, bere obrén araura.

13 Eta renda citzan itſaſſoac hartan ciraden

hilac: herioac-ere eta iffernuac renda citzaten hetan ciraden hilac: eta iugemendua eguin cedin batbederaren obrén araura:

14 Eta iffernua eta herioa egotzi içan ciraden ſuzco ſtagnera: haur da bigarren herioa.

15 Eta nor-ere ezpaitzedin eriden vicitzeco liburuän ſcribaturic, ſuzco ſtagnera iraitz cedin.

## CAP. XXI.

*3 Saluatuén dohainontaſſuna. 7 Fideley eguiten çaizten promeſſac. 8 Gaichtoey eguitẽ çayen mehatchua. 9 Bildotſaren ſpoſa. 11, 16 Ciuitate ſainduaren deſcriptionea eta neurria: 22 Hartaco templea, arguia, gloriá eta habitantac.*

1* GVero ikus neçan ceru berribat eta lur berribat: *ecen lehen ceruä eta lehen lurra ioan içan cen: eta itſaſſoa etzen guehiagoric.

*Eſa.65.17. eta 66.22. 2.Pier.3.13*

2 Eta nic Ioãneſec ikus neçan Ieruſaleme berrico Ciuitate ſaindua iauſten cela Iaincoaganic cerutic, appaindua ſpoſa bere ſenharrarençat appaindubat beçala.

3 Eta ençun neçan voz handibat cerutic, cioela, Huná, Iaincoaren tabernaclea guiçonequin *da*, eta habitaturen da hequin, eta hec haren populu içanen dirade, eta Iaincoa bera hequin içanen da hayén Iainco.

4 *Eta ichucaturen du Iaincoac nigar chorta gucia hayén beguietaric: eta herioa guehiagoric ezta içanen ez vrthueriaric, ez heyagoraric, ez nequeric: ecen leheneco gauçác iragan dirade.

*Lehẽ 7.17. eſa.25.8.*

5 Eta erran ceçan throno gainean iarria cenac,

Huná, gauça guciac berri eguiten ditut. Eta erran cieçadan, Scriba eçac: ecen hitz hauc fidelac dituc eta eguiazcoac.

Lehen 1.8. berr.22.13. 6 Eta erran cieçadan, Eguin da: *ni naiz α eta ω, hatsea eta fina. Nic egarri denari emanen draucat vicitzeco ithur vretic, dohainic.

7 Garaithuren duenac, heretaturén ditu gauça guciac: eta içanen natzayo hari Iainco, eta hura içanen çait niri seme.

8 Baina beldurtiey, eta increduley, eta execrabley, eta guiça-erhailey, eta paillartey, eta poçoaçaley, eta idolatrey, eta gueçurti guciey partea *assignatua* dagote suz eta suphrez dachecan stagnean, cein baita bigarren herioa.

9 Orduan ethor cedin enegana çazpi ampola azquen çazpi plaguéz betheac vkan cituzten çazpi Aingueruetaric bat, eta minça cedin enequin, cioela, Athor, eracutsiren drauat Bildotsaren emazte sposa.

10 Eta eraman nençan spiritutan mendi handi eta gora batetara, eta eracuts cieçadan Ierusalemeco Ciuitate saindu handia, iausten cela cerutic Iaincoaganic:

11 Iaincoaren gloria çuela: eta haren arguia *cen* harri gucizco preciatua irudi, iaspe harri crystalera tiratzen duena beçala.

12 Eta çuen murrailla handibat eta gorabat, cituela hamabi bortha, eta borthetan hamabi Aingueru: eta icenac scribatuac: cein baitirade Israeleco hamabi leinuetaco haourrén icenac.

13 Orient aldetic, hirur bortha: Aquilonetic hirur

hirur bortha: Egu-erditic hirur bortha: eta Occidentetic, hirur bortha.
14 Eta Ciuitatearen muraillác cituen hamabi fundament, eta hetan Bildotsaren hamabi Apostoluén icenac.
15 Eta enequin minço cenac çuen vrrhezco canaberabat, Ciuitatearen eta harẽ borthén eta haren murraillaren neurtzeco.
16 Eta Ciuitatea bera cen quarratua, eta haren lucetassuna *cen* hambat nola çabaltassuna: eta neurt ceçan Ciuitatea *vrrhezco* canaberáz, hamabi milla stadiotaco, eta ciraden haren lucetassuna, eta çabaltassuna eta goratassuna bardin.
17 Guero neurt ceçan harẽ murraillá ehun *eta* berroguey *eta* laur bessotaco, guiçonaren neurriz, cein baita Ainguerüarena.
18 Eta cen haren murraillaco bastimendua iaspez: baina Ciuitatea bera cen vrrhe purez, beira pura irudi.
19 Eta Ciuitatearen murraillaco fundamentac ciradẽ harri preciatu guciaz ornatuac: lehen fundamẽta *cen* iaspez: bigarrena, sapphirez: herena, chalcedonez: laurgarrena, smaraudez:
20 Borzgarrena, sardonyxez: seigarrena, sardoinez: çazpigarrena, chrysolitez: çortzigarrena, beryllez: bedratzigarrena, topazez: hamargarrena, chrysoprasez: hamecagarrena, hyacinthez: hamabigarrena, amethystez.
21 Eta hamabi borthác *ciraden*, hamabi perla, batbederatã bat: eta borthetaric batbedera cen

perla bederaz. Eta Ciuitateco plaçá *cen* vrrhe purez, beira gucizco arguia beçala.

22 Eta ezneçan templeric ikús hartan: ecen Iainco Iaun bothere gucitacoa da hartaco templea, eta Bildotsa.

*Esa.60.19.* 23 *Eta Ciuitateac eztu iguzquiren edo ilharguiren beharric, hartá arguitzeco: ecen Iaincoaren gloriác arguitu du hura, eta haren arguia da Bildotsa.

*Esa.6.5.* 24 *Eta saluatu içan diraten nationeac haren arguian ebiliren dirade: eta lurreco reguéc bere gloriá eta ohorea hartara ekarriren duté.

*Esa.60.11.* 25 *Eta hartaco borthác eztirade ertsiren egunáz: ecen ezta gauic han içanen.

26 Eta ekarriren da Gẽtilén gloriá eta ohorea hartara.

27 Ezta sarthuren hartara gauça satsutzen duenic batre, edo abominationeric eta falseriaric eguiten duenic: baina solament Bildotsaren *vicitzeco liburuän scribaturic daudenac.

*Lehen 3.5, eta 20.12. philip. 4.3.*

CAP. XXII.

1 *Vr vicizco fluuioa.* 2, 14 *Vicitzeco arborea.* 8 *Ainguerüäc adoratu içatea refusatzen.* 14 *Fidelén dohainontassuna, eta infidelén iraiztea.* 18 *Prophetia huni deus eratchequi eztaquión defendatzen.*

1 Vero eracuts cieçadá vr vicizco fluuio purbat, crystalac beçala arguitzen çuenic, Iaincoaren eta Bildotsarẽ thronotic heldu cela.

2 Eta haren plaçaren erdian eta fluuioaren alde

bietaric *cen* vicitzeco arborea ekarte cituela hamabi fructu, hilebethe oroz emaiten çuela bere fructua, eta arborearen hostoac Gentilén ossassunetacotz.

3 Eta gauça maradicaturic batre ezta içanen guehiagoric: baina Iaincoaren eta Bildotsaren thronoa hartan içanen da, eta bere cerbitzariéc cerbitzaturen duté hura.

4 Eta ikussiren duté haré beguithartea, eta haren icena hayén belarretan *içanen da*.

5 *Eta gauic han ezta içanen, eta cādela arguiren, ez iguzqui arguiren beharric eztuté: ecen Iainco Iaunac arguitzē ditu hec: eta regnaturen duté secula seculacotz.

*Esa.60.19.*

6 Guero erran cieçadan, Hitz hauc fidelac *dituc* eta eguiazcoac: eta Propheta sainduén Iainco Iaunac igorri vkan dic bere Aingueruä, bere cerbitzariey eracuts dietzençát sarri eguin behar diraden gauçác.

7 Huná, heldu naiz sarri: dohatsu da liburu hunetaco prophetiazco hitzac beguiratzē dituena.

8 Eta ni *naiz* Ioannes gauça hauc ençun eta ikussi ditudana. Eta ençun eta ikussi ondoan *egotz neçan neure buruä gauça hauc eracusten cerauzquidan Aingueruären oinén aitzinera adora neçançát:

*Lebē 19.10*

9 Eta erran cieçadan, Beguirauc eztaguián: ecen cerbitzariquide nauc hire, eta hire anaye Prophetén, eta liburu hunetaco hitzac beguiratzen dituztenén: Iaincoa adora eçac.

10 Guero erran cieçadan, Eztitzála ciguila liburu hunetaco prophetiazco hitzac: ecen demborá hurbil duc.

11 Iniusto dena biz iniusto oraino: eta satsu dena satsu biz oraino: eta iusto dena iustifica bedi oraino: eta saindu dena sanctifica bedi oraino.

12 Eta huná, ethorten naiz sarri: eta ene alocairua enequin da, *renda dieçodançát batbederari haren obrá içanen den beçala.

Rom.2.6.

13 *Ni naiz α eta ω, hatsea eta fina, lehena eta azquena,

Lehen 1.8. eta 21.6. esa.41.4. eta 44.6.

14 Dohatsu *dirade* harẽ manamẽduac beguiratzen dituztenac: çucen dutẽçát vicitzeco arborean, eta borthetaric sar ditecençát Ciuitatera.

15 Baina campoan *içanen dirade* orac, eta poçoaçaleac, eta paillartac, eta guiça-erhaileac, eta idolatreac, eta norc-ere maite baitu eta eguiten falseria.

16 Nic Iesusec igorri vkan dut neure Aingeruä gauça hauc testifica lietzaçuençat Elicétan. Ni naiz Dauid-en çaina eta generationea, Içar arguitzen duena eta goicecoa.

17 Eta Spirituac eta Sposac erraitẽ duté, Athor. Eta ençuten duenac, erran beça, Athor. *Eta egarri dena, bethor: eta nahi duenac har beça, vicitzeco vretic dohainic.

Esa.55.1.

18 Ecen protestatzen draucat liburu hunetaco prophetiarẽ hitzac ençuten dituen guciari, Baldin nehorc gauça hauey eratchequi badiecé, eratchequiren drautza hari Iaincoac liburu hu-

netan ſcribatuac diraden plagác.

19 Eta baldin nehorc ken badeça *deus* prophetia hunen liburuco hitzetaric, kenduren du Iaincoac haren partea vicitzeco liburutic, eta Ciuitate ſaindutic, eta liburu hunetan ſcribatuac diraden gaucetaric.

20 Gauça hauçaz teſtificatzẽ duenac dio, Segur banatorque ſarri: Amen. Bay, athor Ieſus Iauna.

21 Ieſus Chriſt gure Iaunaren gratia dela çuequin gucioquin. Amen.

*Teſtamentu berriaren fina.*

# TESTAMENTV BERRIAN

*diraden icen propri Hebraico eta Greco batzuén declarationea.*

A

AAron, *mendia, edo mendico guiçona.*

Abel, *he, duenean, Adamē semea, vanitatea.*

Abraham, *anhitzen aita.*

Adam, *guiçona, edo lurrezcoa, edo canaberá.*

Agabus, *othia.*

Agar, *estranger.*

Alexandre, *aiutaçale, verthutetsu.*

Amen, *hala biz, den, edo eguin dadila.*

Ananias, *Iaunaren hodeya.*

Andriu, *gucizco borthitza.*

Anna, *gratiatsua, misericordiosoa.*

Apostolua, *igorria, embachadorea.*

Areopagita, *mendico dena, Marsen costa.*

Athenes, *mola gabea.*

B

Baal, *Idolá, seignoriaçalea.*

Bar-iona, *columba-semea.*

Barnabas, *consolationezco semea.*

Barsabas, *conuertimenduco semea.*

Bartholome, *vrac hartzen dituenaren semea.*

Bartimeo, *seme itsua.*

Ben-iamin, *escuinaren semea.*

Beth-ania, *obedientiazco edo afflictionezco semea.*

Beth-lehem, *ogui-etche.*

Beth-phage, *haran ahoco etchea.*

Beth-saida, *fructu-etchea.*

Boanerges, *igorciri semea.*

Booz, *indarrez.*

C

Cana, *zeloa, imbiá.*

Cananeano, *cana Galilea hiricoa.*

Capernaum, *penitentiazco landá.*

Cedron, *beltztua, tristea.*

Chanaam, *marchãd, trasficari.*

Cherubin, *quasi nabussi.*

Cleophas, *gloria gucia.*

Colossianoac, *herioz punituac.*

Corazin, *huna mysterioa.*

Cypre, *ederra.*

D

Dauid, *maitea.*

Deabrua, *hoguen emailea, calumniaçalea.*

Decapolis, *hamar hiritaco fronterá.*

E

Egypte, *herstura, tribula-*

*tione.*
Eleazar, *Iaincoaren aiutá.*
Elias, *Iaincoa, Iauna.*
Elizabeth, *iuramenduzco Iaincoa.*
Emmanuel, *Iaincoa gurequin*
Emmaus, *conseillu beldur.*
Enneas, *laudatua.*
Enoch, *gigant, cadena.*
Esau, *eguilea, obraçalea.*
Esaye, *Iaincoaren saluamendua.*
Esteben, *coroa.*
Eua, *vici dena.*

G

Gabriel, *guiçon Iaincoa edo Iaincoarena.*
Gad, *dohatsu, prest.*
Galatia, *eznezcoa.*
Galilea, *inguraçalea.*
Gehenna, *miseriazco harana.*
Gog, *atharbea.*
Golgota, *bur-heçur lekua.*
Gomorra, *populu desobedienta.*
Grecoac, *deceuiçaleac.*

H

Hebraicoa, *iragaiten dena.*

I

Iacob, *enganadora.*
Iason, *sendaçalea.*
Iechonias, *Iaunaren preparationea.*
Iericho, *ilharguia, hilebethea.*
Ierusaleme, *baquezco visionea, visione perfectoa.*
Iesse, *delaric içateco dena.*
Iesus, *Saluaçalea.*
Ioachim, *Iaunaren preparationea.*
Ioacim, *Iaunaren resurrectionea.*
Ioannes, *gratiatsu, saindu, misericordioso.*
Ionas, *colomba.*
Ioram, *altchatua.*
Iordana, *iugemenduzco fluuioa.*
Ioseph, *auançamēdua, augmentationea.*
Isaac, *irria.*
Iscariot, *heriotaco guiçona.*
Israel, *Iaincoac garaita.*
Iudas, *laudorio.*

L

Lazaro, *Iaincoaren aiutá.*
Lithostratos, *bide harriz pauatua.*

M

Madian, *iugemendua, debatiçalea.*
Magdalena, *magnificoa.*
Malchus, *regue.*
Mammona, *dirua, abrastassuna.*
Maria, *exaltatua, karmintassunezco itsassoa.*
Martha, *incitaçalea, pronocaçalea.*
Mattheu, *emana.*
Melchisedec, *iustitiazco reguea.*
Mesopotamia, *inguratua*

*eeren hala inguratua baita Euphratesez eta Tigroaz.*
Moyses, *retiratua vretaric.*

N

Nazareth, *sanctificatua, separatua.*
Nazareno, *halaber.*
Nephtali, *comparationea.*
Niniua, *ederra.*

O

Onesimo, *probetchutaco.*

P

Palestina, *ereina, edo estalia hautsez.*
Phanuel, *Iaincoaren ikuslea.*
Pharao, *dissipaçalea.*
Phares, *diuisionea, Iudaco semea.*
Phariseuac, *çathituac.*
Philemon, *pot-guilea.*
Pierris, *harria.*
Probatica, *ardi-plaça.*

R

Roma, *altchatua, gorá.*

S

Salem, *baquea.*
Salmon, *baquezcoa.*
Salomon, *halaber.*
Samaria, *diamant, goardá.*
Sara, *andrea, Abrahamen emaztea.*
Satan, *aduersarioa.*
Saul, *galdeguina, prestatua*
Simeon, *beha egoilea.*
Simon, *obediçalea.*

T

Tarse, *hegal edo luma-duna.*
Thabor, *electionea, pura.*
Thadee, *laudaçalea.*
Thamar, *palmá, dactiera.*
Thomas, *abismea, biritchia.*
Timeo, *itsua edo itsutassuna.*
Timotheo, *Iaincoaren ohorea.*
Tite, *honorablea.*

Z

Zabulon, *egoitzá.*
Zachee, *pur.*
Zacharias, *Iaunaren memorioa.*
Zebedeo, *dotatua, dotea.*
Zorobabel, *confusioneari contrastaçalea.*

# OTHOITZA ECCLESIASTICOEN FORMA:

## Sacramenduén administratzeco eta Ezconçaren celebratzeco, bay eta erién visitatzeco manerarequin.

*Astegunetan, Ministreac on irudi çayón beçala exhortatzen du populua othoitza eguitera: demboraren edo bere predicationean tractatzen duen materiaren araura.*

*Igande goicean communzqui forma hunetara nehore vsatzen du.*

### OTHOITZA.

GVre aiutá dela cerua eta lurra eguin dituen Iaunaren icenean, Amen.

### EXHORTATIONEA.

HAurrideác, presenta bedi gutaric batbedera Iaunaren maiestate handiaren eta goraren aitzinean bere faltén eta bekatuen eguiazco confessionerequin, eta barne bihotzez iarreiquiren çaye nic orain erranen ditudan hitzey.

### CONFESSIONEA.

IAinco Iaun, Aita eternal eta bothere gucitacoa, confessatzen diagu eta eguiazqui eçagutzen hire Maiestate sainduaren aitzinean, ecen bekatore gaichoac eta miserableac garela, iniquitatetan eta corruptionetan concebituac eta sorthuac, gaizqui eguitera emanac, vngui eguiteracotz ez deusgáyac: eta gure vitio eta eguitate gaichtoz hire manamendu sainduén iragaitetic eta

hauſtetic gueldítzen-ere ezgarenac: eta halaz hire iu-gemendu iuſtoz eta eguiazcoz diagu irabaizten eta me-recitzen damnatione eta perditione gure gainera. Gu-ciagatic-ere Iauna, gueuroc baithan deſplacer diagu ce ren offenſatu augun, eta eguiazco dolurequin gure bu-ruac eta gure vitio guciac citiagu condemnatzen, deſi-ratzen dugularic, hire gratiá gure miſeriari valia eta hel daquión.

Auc bada othoi, pietate guçaz Iainco Aita gratiaz eta miſericordiaz betheá, Ieſus Chriſt eure Seme gure Iaunaren icenean. Eta gure vitio eta macula guciac ira-unguiric eta kenduric, hic eure Spiritu ſainduaren do-hainac eta gratiác hala egunetic egunera emenda eta augmenta ietzaguc, non barnetic gure bihotz guciaz gu re hoguena eta iniuſtitiá, ezaguturic eguiazqui dolu eta deſplacer baituquegu eta halaco penitentia bate-tara erekar baiquaitezque, non harc gu bekatu eta vi-tio orotara mortificaturic, iuſtitiazco eta innocentiaz-co fructu hiri placent çaiqueanic gutan procrea eta era-guin baiteçaque Ieſus Chriſt hire Seme gure Iaunaren icenean. Amen.

*Haur eguin denean, compainia guciac edo daquitenéc, cantatzen du té cembeit Pſalmu: guero berriz hatſen da Miniſtrea othoitz eguiten eta Iaincoari bere Spiritu ſainduaren gratiaren eſcatzen, haren hitz ſain-dua haren ohoretan, eta Eliçaren edificationetan fidelqui declara eta re cebi dadinçát bide den humilitaterequin eta obedientiarequin. Othoi-tzeco formá Miniſtreac bere diſcretionera eguiten du:*

*Guero predicua acabatu denean, populua othoitz eguitera exhorta-turic, hunela Miniſtrea hatſen da.*

IAinco Aita celeſtial eta bothere gucitacoá, hic eure ontaſſun handiagatic promettatu draucuc, ecen Ieſus Chriſt eure Seme gure Iaunaren iceneã eguinen drauz-quiagũ othoitzetan eta requeſtetan ençunen gaituála: eta haren beraren eta haren Apoſtoluén doctrinaz-ere iracatſiac guiaudec, haren icenean bil gaitecen, prome-ſequin ecen gure artean bera preſent içanen dela, bay e-ta gure ararteco hi baithara, lurraren gainean gogo eta conſentimendu batez hireganic galdeguin ditzagun gauça guciac impetra ditzagunçát.

Lehenic, hire manamendua diagu, hic gure gainecò eta gobernadore eçarri dituanacgatic othoitz eguin deçagun, guero hire populuaren bay eta persona ororen behar guciacgatic. Bada, hire doctrina sainduaren eta promessén confidançatan, ceren hire beguitharte aitzinean eta hire Seme gure Iaunaren iceneã huna bilduac baicara, supplicatzen augu affectionatuqui, gure Iainco eta Aita oná, gure Saluadore eta Ararteco bakoitzaren icenean, eure ontassun eta misericordia handiagatic nahi drauzquiguan gure bekatuac barkatu, eta hala gure pensamenduac eta desirac euregana tiratu eta altchatu, non gure bihotz guciaz requeri eta inuoca baiheçaquegu eure placer eta vorondate onaren araura. *1.Tim.2.1*

Othoitz eguiten drauagu bada Aita celestialá, hic eure iustitiaren gobernamendua eta cargua eman drauean princc eta iaun hire cerbitzari guciacgatic, eta specialqui leku hunetaco cargua dutenacgatic, nahi drauean, othoi,*eure Spiritu eguiazqui principala eta on bakoitza communicatu eta bethiere augmentatu: halaco maneraz non eguiazqui eçagutzen eta sinhesten dutela ecen Iesus Christ hire Seme gure Iauna dela reguén Reguea, eta iaun gucién gaineco Iauna, nola hic bothere gucia ceruan eta lurrean hari emã baitraucac, hala hecere hic eman drauean carguan, haren cerbitzua eta haren Resumaren amplificationea bere ahal guciaz procura deçaten: bere suietac (cein baitirade hire escuez eguinico creaturác, eta hire bazcaco ardiac) hire placer onaren araura goberna ditzaten, eta guciéc hãbat hemẽ nola bercetan, baquerequin eta amoriorequin,* etsayén peril eta beldur orotaric deliuraturic, hi bethi cerbitza eta lauda ahal eçagun gure mende gucian. *Psal.51.12* *1.Tim.6.15.* *Apoc.17.14.eta 19.16.* *Matt.28.18.* *Luc.1.74.*

Halaber othoitz eguiten drauagu Aita eta Saluadore eguiazcoa, hic eure fidelén ariméz eta eure Euangelio sainduaren dispensationeaz cargu eman drauean pastor guciacgatic, hic othoi nahi dituán hec eure Spiritu sainduaz guidatu eta gobernatu, hire gloriaren Ministre fidel eta leyal eriden ditecençát: bethiere sin hunetara beha daudelaric eta bere ahal guciaz enseyatzen diradelaric, ardi errebelatu guciac Pastor principala- *1.Tier.5.4.*

gana eta Ipizpicuetaco Prince Iesus Christ gure Iaunagana bil eta erekar ditecen: egunetic egunera hartan iustitia, eguimbide eta sainduta ssun orotara probetcha eta auança ditecençát. Eta berçalde nahi dituán, othoi, eure Eliça guciac emparatu eta beguiratu otso harrapa rien ahotic, bay eta mercenario eta alocacer ororé menetic, ecê hec bere ohoreare edo probetchuaré ondoan diabiltzac, eta ez nondic hire icen saïndua glorifica eta hire tropela saluamendutara erekar deçaqueten.

Guehiago othoitz eguiten drauagu Iainco Aita misericordiosoá, generalqui guiçon guciacgatic, nola hi eçagutu nahi baitaiz Iesus Christ eure Semearen redéptioneaz mundu guciaren Saluadore, hala haren eguiazco eçagutzetic lekora, eta erroretan eta ignorantiazco ilhumbean gathibu diradenac, eure Spiritu sainduaren illuminationez, eta eure Euangelio sainduaren predicationez nahi dituán, othoi, erekarri saluamendutaco bidera, cein baita hi euror eçagut adin Iainco eguiazco eta Iesus Christ hic igorri duana: eta hic eure gratiaz visitatu, eta eure hitzaren eçagutzeaz ia illuminatu dituanac, benedictione spiritualez abrasturic egunetic egunera onean auança eta emenda ditecen: guciéc elkarrequin gogo batez eta aho batez adora eçagunçat, eta hire Christ gure Iauna, Reguea eta Legue-eçarlea ohora eta cerbitza deçagunçát.

*Ioan.17.3.*

Halaber o Iainco consolatione guciaren emaileá, gommendatzen drauzquiagu hic crutzez eta tribulationez visitatzen eta gaztigatzen dituán guciac: hic içurriz, edo guerlaz, edo gossetez affligitzen dituan populuac: persona paubreciaz, edo presoindeguiz, edo eritassunez, edo bannimenduz, edo gorputzeco berce calamitatez, edo spirituco afflictionez hunquiac edo tribulatuac, hic othoi halacoey eçagutzera emâ nahi draueá eure affectione paternala, ecen hayén hobeagoagatic eta emendamendutan gaztigatzen dituala: bere bihotz guciaz hiregana conuerti ditecençát: eta conuertituric consolatione ossoa recebi deçaten eta gaitz orotaric deliura eta idoqui ditecençat.

Gucién gainetic gommendatzen drauzquiagu An-

techriſten tyranniaren azpian barreyu dabiltzan anaye gaicho guciac cein eguiazco vicitzeco bazcatic, eta hire icen ſainduaren publicoqui inuocatzeco libertatetic priuatuac baitirade, bay eta preſonér edo hire Euangelioaré etſayéz perſecutatuac, nahi dituan othoi, o Aita gratiazcoa, eure Spirituaren verthuteaz guciac fortificatu, halaco maneraz non ſeculan falta eztitecen, baina perſiſti eta iraun deçaten conſtantqui hire vocatione ſainduan, nahi dituán aiutatu bere afflictionetã eta conſolatu, beharra dutela eçagutzen duan beçala, eta hec eure beguirán eta protectionean harturic otſoén errabiataſſunetic defendatu, eta eure Spiritu ſainduaren dohain gucietan nahi dituan auançatu, bay vician bay hilean hi glorifica eçatençat.

Halaber o Iainco eta Aita eguiazcoa, ençun gaitzac othoi gu-ere, baicara huna bilduac Ieſus Chriſt hire Seme gure Iaunaren icenean haren hitzagatic (eta haren Cena ſainduagatic) eguiguc gratia eguiazqui eta hypocriſia gabe eçagut ahal deçagun cer damnationetan gareń naturalqui, eta cer condemnationea merecitzen eta biribilgatzen dugun egunetic egunera gure buruén gainera, ikuſsiric ecen gutan deus onic eztela, eta gure haraguia eta odola eztiradela capable ez abaſtant hire Reſumaren heretagez poſſeditzeco, hala bada ſendi eraci ieçaguc gure beharra, non gure affectione guciaz eguiazco confidançarequin oſſoqui renda baiquaitezque Ieſus Chriſt hire Seme maite gure Iaunagana, gure Saluadore eta redemptore bakoitzagana, harc gutan habitatzen delaric gure Adam çaharra mortificaturic, arramberri gaitzançat vicitze hobeago batetara, * ceinez hire icena nola eguiazqui ſaindu baita eta digne, hala exalta eta glorifica baitaite leku gucietan * Halaber duán hic gure gainean dominationea eta gobernamendua, eta bethiere guerotic guerora ikas deçagun hire maieſtate ſainduaren ſuiet eta obedient içaten: halaco maneraz non gucietan eguiazqui regna baiteçaquec: eure populua eure hitzaré ſceptreaz eta eure Spirituaren verthuteaz gobernatzen dualaric eta eure etſayac eure eguiaren eta iuſtitiaren indar-

*( ) Bi mer ca hauén barnean dena eʒta erraiten Cená eguiten den egunean baicen.*

*Matt. 6. 9.*

*Sanctifica bedi hire icena.*

*Ethor bedi hire reſumã*

raz bethiere confunditzen ditualaric.

Eta halaz hire gloriari contraſtatzen çayón puiſſança eta gorataſſun gucia egunetic egunera aboli eta deſeguin dadin, hire Reſumaren complimendua eta perfectionea ethor daiten artean, noiz hi aguerturen baitaiz eure Semearen perſonán. * Bay eta gu goitico creatura guciequin eguiazqui eta perfectoqui hire obedient garen, hi eure Ainguerù celeſtialec hire manamenduac eguiazqui complituz obeditzen auten beçala, eta manera berean othoi hire vorondatea contradictióneric batre gabe compli bedi, eta guciac rangea eta emplega bitez hire cerbitzatzera eta obeditzera, ceinec berevorõdate propria eta haraguiaré guthicia guciac batbederac renũciatzen dituelaric. * Eta gu ebilté garela hire amorioan, eta beldurrean gure vici gucian hire ontaſſunaz haz eta entreteni gaitecen othoi, gure oguiaren baquez iateco, behar eta mengoa ditugun gauça guciác emaiten drauzquigualaric, dacuſſagunean ecen hic guçaz artha duála, hobequi gure Aitatan eçagut eçagunçát, eta on gucién hire eſcutic vkaitera beha gaudecençat, ſperançaric ez confidançaric batre eceinere creaturatan eçarten eztugularic, baina gucia hitan eta hire ontaſſunean eçarten dugularic. * Eta ceren vicitze mortal hunetan bekatore gaichoac baicara eta hambat imperfectionez betheac, non ardura erorten eta eguiazco bidetic aldaratzen eta erautzen baicara : othoitz eguiten drauagu barkatu nahi drauzquiguán gure faltác, ceinacgatic hire iugemendura çordun baicara: eta barkamendu huneçaz nahi gaituan herio eternalera obligatuac garen obligançatic deliuratu eta idoqui. Eztieçaguala bada othoi gutan den gaichtaqueria imputa ez conta: * nola guc-ere eguiten çaizquigun iniuriác ahancitera hire manamenduz vtziten baititugu, eta gure etſayéz mendeca lekuan, hayén ona procuratzen eta procuratu gogo baitugu.

Finalqui nahi gaituán, othoi, hemendic harat eure verthuteaz ſuſtengatu, gure haraguiaren infirmitatéz trebuca ezgaitecençat. * Eta ceren gure buruz hambat baicara indar chipitaco eta erorcór, non den gutie-

*Eguin bedi hire vorondatea.*

*Gure eguneco oguia igue egun.*

*Eta barka yetzague gure bekatuac.*

*Mat. 6. 14*

*Eta ezgaitzala tentationetã ſar eraci.*

na-ere ecin baiquinauteque fermu:eta berçalde halaco etsayéz ardura inguratuac eta iauquiac baicara nola baita, deabrua, mundua, bekatua, eta gure haragui propria non guri guerla eguitetic behin-ere ezpaitirade baratzen: fortifica gaitzac bada othoi, eure Spiritu sainduaz, eta hala harma eure gratiéz, non constantqui tentatione guciéy bihur eta garait ahal gaquidiztē, eta bataillla spiritual hunetan perseuera ahal deçagun, victoria bethea vkanic, finean Iesus Christ hire Seme gure capitain eta goarda denarequin hire resumán triumpha deçaquegun arteranoçotz, Amen.

*Cena celebratu behar den egunean seguitzen déna-ere erraiten da.*

Eta nola Iesus Iaunac ezpaitrauzquic gure bekatuen barkamendutan behin solament offrendatu crutzean bere gorputza eta odola: baina are communicatu nahi baitrauzquigu vicitze eternaleratco hacitzetan, eguiguc othoi gratia haur, nó bihotz chahuz eta zelo ardentez recebi baiteçaquegu harenganic ontassun handi haur, eta eguiazco fedez haz baiquaitezque haren gorputzaz eta odolaz, bay eta berarçaz ossoqui: nola hura eguiazco Iainco eta eguiazco guiçon delaric, baita eguiazqui ogui saindu celestiala, gure viuificatzeco, guc hiagoric gueurón vici ezgarençat, ez gure natutaren araura, cein baita gucia corrumpitua eta viciosoa: baina Christ bera vici den gutan, vicitze saindura, dohatsura eta seculacotz irauten duenera eraman gaitzançat: eta halatan Testamentu berrian eta alliánçazco gratián participant eguin gaitecen: huneçaz seguratuac gaudela, ecen hi eure ontassunagatic nahi aicela içan eternalqui gure Aita fauorable, guri gure bekatuac imputatzen eta contatzen eztrauzquigualaric: eta gorputzera eta arimara behar dugun guciaz eure haour eta heredero beçala probeditzen gaitualáric: guc bethiere hiri gloria eta remerciamendu renda dieçaguançat, eta hire icena erranez eta eguinez magnifica deçagunçát. Eguiguc bada Aita celestiála, egungo egunean manera hunetan, hire Seme maitearen memorio saindu hunen celebratzeco gratia, eta hartan exercita gaitecen, eta pu-

blica deçagun haren herioaren beneficio eta irabaci handia: hacitze eta indar berri fedean eta ontassun gucian harturic, hambat confidança handiagoz hi Aita dei ahal eçagun eta hitan bethi gloria ahal gaitecen. Amen.

*Cená acabatu denean remerciamendu hunez, edo cembeit berce hunelacotz vsatzen ohi da.*

AIta celestialá, laudorio eta gratia eternalác rendatzen drauzquiagu, ceren gu bekatore gaichoac hunelaco on handian participant eguin baiquaituc, ceren Iesus Christ eure Seme gure Iaunaren communionera erekarri baiquaituc, hura guregatic heriotara liuraturic eta vicitze eternaleco viandatan eta hacitzetan eman nic. Orain-ere, othoi, eguin ieçaguc gratia haur, eztuan permettitu nahi gauça hauc seculan ahanz daquizquigun: baina aitzitic gure bihotzetan imprimituac ditugularic, auança gaitecen ardura obra on gucitara prest eta verthutetsu den fedean, eta hemendic haratco gure içate gucia iragan eta amplega deçagun hire gloriaren auaçamendutan eta gure hurcoaren edificationetan, eta haur gucia Iesus Christ hire Seme gure Iaun Spiritu sainduaren vnitatean, hirequin eternalqui vici denaren eta regnatzen duenaren icenean. Amen.

*Populuaren partitzeracoan, Ministreac, Leguean gure Iaunac ordenatu çuenaren araura, eguiten duen benedictionea.*

Nomb.6.24 IAunac benedica, eta conserua çaitzatela, Iaunac bere beguithartea çuen gainera argui deçala, eta çuecaz pietate duela. Iaunac bere beguithartea çuetara itzul deçala, eta prosperitate onetan mainteni çaitzatela. Amen.

*Ceren Scripturác iracasten baiquaitu ecen içurriteac, guerlateac, eta berce goitico aduersitateac diradela Iaincoaren, gure bekatuen punigarritaco visitatione: halacoac heldu diradela dacussagunean, eçagutu behar dugu ecen Iaincoa gure contra asserre dela: eta orduan, eguiazco fidel bagara, gure faltác eçagutu behar ditugu, eguiazqui desplacer eta dolu dugunçat: Iaunagana eguiazco penitentiaz eta emendamenduz conuertitzen garelaric eta eguiazco, humilitaterequin barkamendu impe-*

*tratzera othoitz eguiten dugularic.*

*Causa hunegatic, baldin cembeit orduz badacussagu ecen Iaunac mehatchatzen gaituela, haren patientia tenta ezteçagunçát, eta baldin conuerti ezpagaitez gure gainera heldu dela dacussagun iugemenduari aitzinera ilki guiaizquionçat: on da astean egun-bat ordenaturic dē: hartan specialqui gauça hauc remonstra ditecençat, eta othoitzác eta supplicationeac, demborac emaiten duen beçala, eguin ditecençát. Eta hartacotzat othoitzeco forma seguitzen den haur eguin içan da.*

*Predicu hatsean eguiten da, igandetan costumatzen dela erran dén confeßionea. Predicuaren finean, remonstraturic populuari, nola lurraren gáinean eguiten diraden bekatuacgatic Iaincoac affligitzen dituen gendeac, eta nola mundua gaichtaqueria orotara emana den: populua conuertitzera eta vicitzearen corregitzera, bay eta halaber misericordia impetratzeco othoitz eguitera exhortatu ondoan, hatsen da Ministrea manera hunetan.*

IAINCO Aita bothere gucitacoa eta celestialá, eçagutzen diagu gueuroc baithan, ecen hire aitzinera presentatzera, gure beguién goiti cerura altchatzecoere ezgarela digne: eta eztugula gure buruez hambat presumitzceco non vste dugũ hiçaz gure orationeac ençunac içanen diradela, baldin gutan denera beha badeçac. Ecen gure conscientiéc accusatzen guiaitié, eta gure bekatuéc testimoniage ekarten dié gure contra: eta baceaquiagu ecen hi iuge iustoa aicela, eta eztituala bekatoreac eta gaichtoac iustificatzen, baina hire manamenduac hausten eta iragaiten dituztenac punitzen dituála. Hunegatic, Iauna, gure içate gucia consideratzẽ dugunean confus gaituc gure bihotzetan, eta gure buruz gogo-galtzeaz eta desesperatzeaz berce gauçaric ecin guineaidiquec, ia herioaren abysmoetan baguina beçala. Guciagatic-ere Iauna, eure misericordia handiagatic manatu vkan gaituanaz gueroz, hiregana retira gaitecen, eta hi inuoca eçagũ, bay are iffernu çolatic-ere, eta cembatenaz on beharrago, eta ezdeusago gure buruac eçagutzen baititugu, hambatenaz cineçago dugun recursa hire ontassun subiranora eta handira: eta promettatu-ere draucuanaz gueroz ecen gure othoitzac eta supplicationeac ençunen dituála, ez gure dignitatea eta merecimendua consideratuz, baina Iesus Christ gure Iaun, hic Aduocat eta Ararteco ordenatu draucuanaren icenera eta merecimendura behatuz: ba-

da, confidança humano gucia renuntiatzen dugularic, eta hire ontaſſunean berean gure confidança gucia eçarten dugularic, ſporçatzen eta venturatzen gaituc, Iauna, hire aitzinean preſentatzera, eta miſericordia impetratzeco hire icen ſainduaren inuocatzera.

Lehenic Iauna, hic munduco berce gende guciey-ere eguiten drauztean gratia eta ontaſſun gucien gainetic, guri bercetaric abantail hambat gratia handiric eguin draucuc, non impoſſible baita conta ez adimenduz ardiets-ere ahal ditzagun.

Specialqui eure ontaſſun handiagatic nahi vkan gaituc eure euangelio ſainduaren eçagutzera erekarri, deabruaren ſuiectione miſerabletic, idolatria maradicatutic, eta ſuperſtitione vanoetaric eta erhoetaric deliuraturic eta idoquiric, ceinetã hundat uac baiquinaden, guidatu vkan gaituc eure eguiaren arguira. Eta halere ingrat eta eçagutze gabetaco içanez, hire eſcutic recebitu vkan ditugun ontaſſun eta gratia handiac ahancitera vtziric, bide çucenetic aldaratu içan gaituc, eta hi vtziric, gure haraguiaren guthicia gaichtoey iarreiqui içan gaitzeaiztec: bide cen ohorea ez obedientia hire hitz ſainduari eztiraucagu ekarri ez rendatu: ez eta eurror bide beçala ezaugu laudatu ez magnificatu: eta hic ardura benignoqui eta fidelqui eure hitzaz auiſatu bagaituc-ere, hire admonitionéz ez remonſtrancéz conturic eztiagu eguin. Bekatu eguin diagu bada, Iauna, eta anhitz maneraz offenſatu vkan augu: eta harren, confuſioneric eta ahalqueric baicen ezteacuſſagu gure gainean: eguiaz ſenditzen eta eçagutzen dugularic gueuroc baithan ecen erran ez penſa ahal deçaquegun baino hoguendunago garela hire iugemendu aitzinean, hambat non baldin guc merecitu beçala hic tractatu nahi baguentuc, ſeculaco herio eta damnatione eternaletic itzurteric ecin baiquenduque. Ecen baldin gure buruac excuſatu nahi baguentu, gure conſcientiác accuſatzen guiaitic, eta gure iniquitatea duc hire beguién aitzineã gure condemnagarri. Eta ſegur Iauna, gure gainera igorri dituán gaztigamenduetaric eçagutzen diagu iuſtoqui eta cinez gure contra aſſerretu içan aicela. Ecen

iuge iusto eta bidezco aicenaren gainean, eztituc merecitu gabe hic eureac affligitzen. Bada hire cihorréz cehatu içanic, eçagutzen diagu gure buruén contra tharritatu vkan augula. Eta orain-ere badiacussagu hire escua gure punitzera altchatua: eta eure mendequioaren eta punitionearen executatzeco vsatzen ohi dituan harmác orain desplegatuac eta idoquiac diaudec: eta bekatoren eta gaichtoén contra eguiten dituán mehatchuac prestatuac diaudec gure beguién aitzinean.

Eta baldin vnguiz oraino baino rigorosquiago eta go gorquiago punitu nahi baguintuc-ere: eta plaga baten lekuan ehun recebitzeco guintuen orduan-ere: eta are berce orduz eure Israeleco populuaren faltén corregitzean vsatu vkan duán malediĉtione guciac gure gainera eror balitez-ere, confessatzen eta contradiĉtioneric batre gabe aithortzen diagu çucen onez eta mereciz guintuqueela.

Guciagatic-ere, Iauna, *hi gure Aita aiz, eta gu lur eta lohi baicen ezgaituc: hi aiz gure Creaçalea, eta gu gaituc hire escuen obrác: hi aiz gure Artzaina, eta gu hire arthaldea: hi aiz gure Redemptorea, eta gu hic redemitu duán populua: hi aiz gure Iaincoa, gu gaituc hire heretagea. Ezadila bada othci asserre gure contra, eure hirán gure corregitzera. Ezaicela gure iniquitateaz eguehiagoric orhoit, hura puni deçançát: baina eure emetassunaren araura emequi gaztiga gaitzac. Gure bekatuén causaz hire hirá irachequi içan duc: baina aicén orhoit, ecen hire icena gure gainean inuocatzen dela, eta hire mercá eta segnalea ekarten dugula. Aitzitic entreteni eçac eure gratiaz gutan hassi vkan duan obrá, mundu guciac eçagut deçançat ecen hi aicela gure Iaincoa eta Saluadorea. Hic badaquic, Iauna, ecen iffernuetan daunçan hiléc, eta hic deseguin eta confunditu dituqueanéc ezautela laudaturen: baina arima tristéc eta desolatuéc, bihotz aurizquiéc eta abatituéc, bere hoguenaren sendimenduz hersturatan diraden cōscientiéc, eta hire gratiaren gossea dutenéc, ohore eta laudorio emanen draué. Eure Israeleco populuac anhitzetan bere iniquitatéz hiratara prouocatu vkan au: eta hiç hura iugemendu iustoz affligitu vkan duc: eta cembat-e-

Esa.64.6.

ze hãdi baitziraden haren faltác, eure cerbitzari Abrahã mequin, Iſaac-equin, eta Iacob-equin eguin vkan auẽn alliançaren amorez, eure cihor eta malediƈtione hayén gainera preſtaturic edutzanac, itzuli vkan dituc hetaric, hala non hayén orationeac ezpaitirade egundano hiçaz iraitzi ez arbuyatu içan. Guc badiagu, hire gratiaz, alliançabat vnguiz hobeagoric, eta hire aitzinean allega ahal deçaquegunic, ceinetan repoſa ahal baiquaitezque: cein baita, hic eurorrec Ieſus Chriſt gure Saluadoreareẽ eſcuan eguin eta eçarri draucuán alliançá, cein nahi vkan baituc haren odolaz ſcriba ledin, eta haren herioaz eta paſſioneaz ciguila eta confirma ledin. Halacotz, Iauna, gure buruéz eta ſperança humano guciáz renuntiatzen dugula, dohain onezco alliança hunetara gure bihotz eta affeƈtione guciaz retiratzen gaituc, ecen alliança hunez Ieſus Chriſt hire Seme gure Iaunac, hiri guregatic bere gorputza ſacrificiotan offrendaturic reconciliatu vkan garauzquic. Beheçac bada, Iauna, Chriſt eurearen beguithartera, eta ez guregana: haren interceſſioneaz hire hirá appacega eta amatiga dadĩçát eta hire beguitharteac argui beça gure gainera gure bozcariotan eta ſaluamendutan: eta hemendic harát recebi gaitzac, othoi, eure gobernamendu ſaindura, eta guida gaitzac eure Spirituaz, harc vicitze hobetara regenera gaitzançát: eta moien harçaz,

*Sanƈtifica bedi hire icena. Ethor bedi hire reſumá. Eguin bedi hire vorondatea ceruan beçala lurrean-ere. Gure eguneco oguia igue egun. Eta barka ietzaguc gure faltác guc-ere falta eguin draucuteney barkatzen drauegun beçala. Eta ez gaitzala ſac eraci tentationetan: baina deliura gaitzac gaitzetic. Ecen hirea duc reſumá, puiſſançá eta gloriá ſecula ſeculacotz. Amen.*

Eta gure ahoén irequiteco, eta hiri gure neceſſitatean requeſtaric eguiteco digne ezgarela eçagutzen diagu, guciacgatic-ere hire placer ona içan denaz gueroz, guri manatzera elkargatic othoitz daguigun, othoitzen eta ſupplicatzẽ augu gure anaye eta membro gaicho, hic eure cihorrez eta gaztigamenduz viſitatzen dituán guciacgatic, othoi nahi duán eure hirá hetaric har-

çaratu eta itzuli: eta orain bereciqui N-aganic eta N-aganic. Aicén, othoi, orhoit Iauna, hec-ere gu beçala hire haour diradela, eta baldin offensatu bahauté, ez-tuán halacotz hetaric harçaratu nahi eure ontassuna eta misericordia, cein hire fidelac baithara perpetual içanen dela promettatu vkan baituc. Beha-eçac bada othoi, eure clementiazco beguiez eure Eliça gucietara, eta orain içurriz edo guerlaz edo cembeit berce affliction motaz visitatzen dituán populu gucietara: eta hire gaztigamenduz edo eritassunez, presoindeguiz edo paubreciaz gaztigatzen duan persona :ro tara, guciac consolatzen ditualaric, beharra dutela hic hobequi eçagutzen duánaren araura: eta gaztigamenduac probetcha eraciten drauztealaric bere correctionetan eta emendamendutan, confirmatzen ditualaric patientiá onetan, moderatzen dualaric hetara eure rigora, eta finean, guciéy gaitz orotaric deliuraturic, hire ontassunean aleguer atzeco eta hire icen sainduaré laudatzeco materia complitua eman nahi drauceán. Eta principalqui nahi duán, othoi, behatu eure misericordiazco beguiaz hire eguiaren alde trabaillatzen diradenetara, hambat generalqui nola particularqui, constantia fermu batez harma ditzançát, eta defendatzen ditualaric bethiere assisti aquiençát: hayén eta eure etsayén arteac eta fineciac deseguiten ditualaric, hayén furia eta errabiatassuna bridatua daducalaric, bethi confunditzen ditualaric, hire contra eta hire Semearen membroén contra iauquiten dituzté entrepresa gucietan eta ezteçála othoi, permetti Christinotassuna choil desola dadin, ez hire icenaren memorioa lurretic ken eta gal dadin: ezteçala permetti hec gal ditecen ceinén gainean nahi vkan baituc hire icen saindua inuoca ledin, eta Turcac, Paganoac, Papistác, eta goitico infidelac gloria ditecen, hi blasphematzen autela.

Halaber othoitz eguiten drauagu Aita celestialá, hic eure iustitiaren cargua eman vkan drauean prince eta iaun hire cerbitzari guciacgatic: eta specialqui leku hunetaco Iaunacgatic, nahi drauean, othoi, communicatu eta egunetic egunera augmentatu * eure. Spiritu on *Psal.51.12.*

bakoitza eta eguiazqui principala:halaco maneraz non
1.Tim.6. 15. eguiazco fedez eçagutzen dutela ecen * Iesus Christ
hire Seme gure Iauna dela reguén Reguea eta iaun gu-
Apoc.17. 14. eta 19. 16. cién gaineco Iauna: eta nola hic hari eman baitraucac
bothere gucia bay ceruan bay lurrean,hala hec-ere bere
guehientassuneã, haren cerbitzatzera eta harẽ resuma-
ren auançatzera eta exaltatzera procura deçatẽ,hire vo
rondatearen araura gobernatzẽ dituztela bere suietac,
baitirade hire escuez eguinico creaturác,eta hire alha-
guneco ardiac : bay hemen bay leku gucietan baquetan
eta amorio onetan, sanctitate eta puritate orotan cer-
Luc.1. 74. bitza ahal eçagun : * eta gure etsayén menetic eta bel-
durretic lekora gure vici gucian lauda ahal eçagun.

Halaber othoitz eguiten drauagu Aita eguiazcoa e-
ta Saluadoreá,hic eure fidelén artzain ordenatu dituán
eta arimén cargua eta eure Euangelio sainduaren dis-
pensationea eman draueán guciacgatic, nahi dituán,
othoi,eure Spiritu sainduaz guidatu eta gobernatu,hire
gloriaren ministre fidel eta leyal eriden ditecençat:be-
thiere bere ahal guciaz huni darreitzalaric, nondic
ardi errebelatu eta banatu gaicho guciac elkargana dai-
1.Pier.5.4 tezqueen * eta Iesus Christ Iaunagana Pastor princi-
palagana eta Ipizpicuetaco princeagana bil eta erekar
ditecen,hartan guerotic guerora iustitia eta sanctitate
gucitara aitzinaramendu har ahal deçaten. Eta berce
alde nahi dituán,othoi,eure Eliça guciác deliuratu eta
beguiratu otso harraparién eta mercenarioén ahotic,
cein bere ohorén eta probetchuaren ondoan baitabil-
tzá,eta ez hire icen sainduaren exaltationearen eta hi-
re arthaldearen saluamenduaren ondoan.

Guehiago othoitz eta supplicamendu eguiten dra-
uagu,Iainco eta Aita misericordiosoá, guiçon guciac-
gatic, nola Iesus Christez eguin içan den redemptio-
neaz leinu humano guciarẽ Saluadore eçagutu nahi
baitaiz , hala oraino haren eçagutzetic lekora ilhum-
bean eta errorezco eta ignorantiazco gathibutassunean
eta subiectionean diradenac, eure Spiritu sainduaren
illuminationez eta eure Euangelioaren predicationez,
nahi dituán, othoi, erekarri saluamendutaco bide e-

guiazcora:cein baita hunetan,* Hi euror eçagut eçagun Iainco eguiazco eta Iesus Christ hic igorri duana: othoitz eguiten drauagu halaber,hic ia eure gratiaz visitatu eta eure hitz sainduaren eçagutzeaz illuminatu dituanac-ere,bethi hire eçagutzean entreteni eta auançа ditecen hire benedictione spiritualez abrasturic; guciéc elkarrequin hi gogo batez eta aho batez adora eçagunçát,eta hire Christ gure Iaun,Regue eta Legislatora bethi ohora eta cerbitza deçagunçát. Amen.

Ioan 17.3

# BAPTISMOAREN
## ADMINISTRATZECO
## FORMA

*Iaquin behar da ecen haourrac batheyatzera ekarteco diradela,Igãdean Catechismeco orduan, edo cembeit berce egunez predicura: nola Baptismoa baita Eliçara recebitze solennelbat, hala congregatione guciaren compainian eguin dadinçát.*

*Predicua acabatu denean,presentatzẽ da haourra. Eta orduan Ministreac hunela hatsen du.*

GVRE aiutá dela cerua eta lurra eguin dituen Iaunaren icenean. Amen.

Presentatzen duçue haour hori batheya dadinçát?

*Ihardestea.*

Bay.

*Ministreac.*

IEsus Christ gure Iaunac iracastẽ draucu cein paubreciá eta miseria handian guciac sortzen garén, dioscunean ecen berriz sorthu behar garela. Ecen baldin gure naturac arramberritu behar badu Iaincoaren resumara sartzéric vkaitecotz, asco seignale da, ecen hura choil corrumpitua eta maradicatua dela. Eta hunetan auisatzen eta iracasten gaitu, humilia gaitecen, eta gueuroc baithan desplacer dugun. Eta manera hunetan preparatzen gaitu bere gratiaren desiratzera eta requeritzera, harçaz gure lehen naturaren corruptione eta maledictione gucia aboli eta edequi dadinçát. Ecen gratia hunec

ecin duque gutan lekuric,non lehen gure verthute, çuhurtzia, eta iustitia guciaren confidança guciaz hustuac eta billuciac ezgaren: bay hambatetarano non gutan den gucia condemna baiteçaquegu.

Guero gure dohacabetasluna eracutsi draucun beçain sarri, consolatzen-ere bagaitu bere misericordiaz, promettatzen draucunean ecen regeneraturen gaituela bere Spiritu sainduaz, regeneratione hura haren resu maraco sartzebat beçala dugunçát. Eta regeneratione hunec ditu bi parte:bata,gure buruéz renuntiadeçagun, eta ezgarreitzan gure raçoin propriari,ez placerari,ez vorondateari: baina subiuga eta gathiba ditzagun gure adimenduac eta bihorzac Iaincoaren çuhurtziara eta iustitiara,eta mortifica deçagun gutaric eta gure haraguitic den gucia. Bercea da,Iaincoaren arguiari garreitzan haren vorondate ona obedi deçagunçát, bere hitzaz iracasten eta bere Spiritu sainduaz guidatzen gaituen beçala. Bi punctu hautaric bataren eta bercearen complimendua Iesus Christ gure Iaunean da:ecé haren herioac eta passioneac du halaco verthutea, non hartan participatzen dugularic herioari ohortze becembat baiquaizquio,gure haraguiaren guthiciac mortifica eta iraungui ditecençát. Halaber, haren resurrectionearen verthutez resuscitatzen gara vicitze berri batetara, cein baita Iaincoaganic, haren Spirituac gobernatzen eta maneyatzen gaituen becembatean, gutan haren gogaraco eta placent diraten obrác eguin ditzançát. Guciagaticere gure saluamenduco puncturic principalena eta lehena da, Iaincoac bere misericordiagatic gure falta guciac barka dietzagun, hec imputatzen ez contatzen eztrauzquigularic, baina heçazco memorioa vtziten eta iraunguiten duelaric, hec haren iudicioan conta eztaquizcunçát. Gratia hauc guciac eguiten çaizquigu Baptismoaz bere Eliçaco membro eguiten gaituenean: ecen sacramendu hunetan gure bekatuen barkamendua testificatzen draucu.Eta causa hunegatic ordenatu vkan du vrezco signoa, figura eta claroqui representa lieçalgunçat, ecen nola element hunez gorputzeco satsutassunac eta maculác ikutzen eta garbitzen baitirade hala

nahi

nahi dituela garbitu eta purificatu gure arimác,guehiagoric hetan macularic agueri eztençát. Guehiago, gure arramberritzea eta renouellamendua hartan presentatzen draucu, eta haur consistitzen da, erran den beçala, gure haraguiaren mortificationean, eta gutan eraguiten eta procreatzen duen vicitze spiritualean.

Bada gratia doblea recebitzen dugu gure Iaincoaganic Baptismoan, baldin gueuroc gure ingrat içanez sacramendu hunen indarra eta verthutea ezezta ezpadeçagu. Ecen hartan dugu testimoniage segura eta eguiazcoa, nola Iaincoa, Aita eguiazco eta fauorable içan nahi çaicun, gure bekatuac eta faltác imputatzen ez contatzen eztrauzquigularic. Berce alde testimoniage dugu hartan ecen Iaincoac escu eduqui nahi draucula, eta bere Spiritu sainduaz assistitu nahi çaicula, deabruaren, bekatuaren eta gure haraguiaren guthicién contra victoria duquegun beçala bataílla ahal gaitecençát, haren Resumaren libertatean vicitzeco, cein baita iustitiazco eta eguimbidezco Resumá.

Bada bi gauça hauc gutan Iesus Christen gratiaz cõplitzen diradenaz, gueroz gauça claroa da Baptismoaré verthutea eta substantiá, hartan cõprehéditzen dela ecé eztugu haré odola baićé berce ikuz garriric, eta eztugu berce arramberritzeric haren herioã eta resurrectioneã baicé. Baina nola bere abrastassunac eta benedictioneac bere hitz sainduaz cõmunicatzé baitrauzquigu, hala bere Sacramenduéz partitzen eta emaité drauzquigu hec.

Bada gure Iainco misericordiosoac eta gratiazcoac, bere haourretan gure adoptatzea eta bere Eliçaco cõmunionera recebitzea ez asco itzeuquiz, largoquiago eta frãgoquiago bere õtassuna gure gainera hedatu nahi vkã du: promettatzen draucunean ecen gure eta gure generationearé Iainco içané dela, bay milla generationetarano. Halacotz fidelén haourrac Adamen leinu corrumpitutic içaganatic, hayén aitequin eguin çuen alliançaren verthutez bere haourrén contuan aboatzen eta recebitzen ditu. Causa hunegatic lehé hatsetic nahi vkan du Eliçan haourrec recebi laçaten Circoncisionea, ceinez orduan represéntatzen baitzuen, egun Baptismoan

eracuſten çaicun gucia. Eta nola hec circoncidi litecen manatzen baitzuen, hala bere haourretan-ere recebitzen cituen, eta halacotan çadutzan, eta hayén Iainco deitzen cen, hayén aiten-ere beçala.

Orain bada Ieſus Iauna lurrera iautſi içan denaz gueroz, ez Iainco bere Aitaren gratiaren hertzera ez gutitzera, baina ſaluamendutaco alliançaren mundu orotara hedatzera, cein baitzen Iudeaco populuan enſerratua, ezta dudaric gure haourrac promettatu draucun vicitzeco eta ſaluamenduco heredero eztiraden, eta halacotz dio S. Paulec ecen Iaincoac ſanctificatzen dituela hec amén ſabeleandanic, Paganoén eta infidelén haourretaric diſcerni eta berez ditecençát. Eta raçoin hunegatic hari preſentatzen çaizquión haourrac recebitu vkan ditu Ieſus Chriſt gure Iaunac, S. Mattheuen hemeretzigarren capituluan ſcribatua den beçala, non erraiten baita huñela, Orduan preſentatu içen çaizquio haourrac hayén gainean eſcuac eçar litzan eta othoitz leguiançát: eta diſcipuluéc reprotchatzen cituztén hec. Eta Ieſuſec dioſte, Vtzitzaçue haourrac eta enegana ethortetic eztitzaçuela empatcha: ecen hunelacoén da ceruëtaco Reſumá.

Ceruëtaco Reſuma hayén dela ſeguratzen duenaz gueroz, eta hayén gainean eſcuac eçarten, eta hec Iainco bere Aitari gõmendatzẽ drautzanaz gueroz, aſco claroqui declaratzen draucu, ecen hec eztitugula haren Eliçatic iraizteco. Bada haren doctrina huni garreitzalaric, recebituren dugu haour haur haren Eliçara, Iaincoac bere fideley promettatu drauzten onetan participant eguin dadinçát. Eta lehenic gure orationeaz preſentaturen draucagu, guciéc bihotz humilez erraiten dugula.

Iainco Aita eternal eta bothere gucitacoa, eure miſericordia handiagatic promettatu nahi, vkan draucuanaz gueroz, gure, eta gure haourrén Iainco içanen aicela, othoitz eguiten drauagu, nahi duán gratiá haur confirmatu, hic eure Eliçara deithu dituán aita-ametaric engendratu den haour hunen gainean. Eta nola hiri guçaz dedicatzen eta preſentatzen baitzaic, hala

nahi duán eure protectione sainduan recebitu, hunen Iainco eta Saluadore eracuſten eta declaratzen aicela, barkatzen draucoala bekatu originala, ceinetan hoguendun baita Adamen arraça gucia:eta berce alde eure Spirituaz ſanctificatzen duala, eçagutzetaco adinera dathorrenean, hi euror bere Iainco eta Saluadore bakoitz eçagut eta adora eçançát, bere vici gucian glorificatzen auelaric, bethi hireganic bere bekatuéz barkamendu impetra deçançát. Eta gratia hauc obteni eta recebi ahal ditzançát, nahi duán, othoi, Iesus Iaunaren communionera incorporatu, haren gorputzeco membroetaric bat beçala, haren on gucietan participant eguin dadinçát. Ençun gaitzac Aita miſericordioſoá, guc huni hire ordenançaren araura communicatzen draucagun Baptiſmoac, hire Euangelioan declaratzen çaicun beçalaco fructua eta verthutea eracuts deçançat.

*Gure Aitá ceruëtan aicena, Sanctifica bedi hire icena. Ethor bedi hire reſuma. Eguin bedi hire vorondatea ceruan beçala lurrean-ere. Gure eguneco oguia iguc egun. Eta barka iezaguc gure bekatuac, nola gucere offenſátu gaituztenéy barkatzen baitrauegu. Eta ezgaitzala ſar eraci tentationetan, baina deliura gaitzac gaichtotic. Ecen hirea duc reſumá, puiſſançá eta gloriá ſecula ſeculacotz, Amen.*

Haour hori Chriſtinoén Eliçaco compainiara recebitu behar denaz gueroz, çucc duçue promettatzen, ecen eçagutzetaco adinetara dathorrenean, iracatſiren eta inſtruituren duçuela, Iaincoaren populuac eçagutzen eta recebitzen duen doctrinán, guciéc daducagun fedeco confeſſionean laburſqui eta ſummarioqui comprehenditzen den beçala: céin baita hunela.

*Sinheſten dut Iainco Aita bothere-gucitaco ceruaren eta lurraren Creaçalea baithan. Eta Ieſus Chriſt haren Seme bakoitz gure Iauna baithan: Cein concebitu içan baita Spiritu ſainduaganic: Sorthu Maria virginaganic: Pontio Pilatoren azpian paßionatu, crucificatu hil eta ohortze: Iautſi içan da iffernuetara: Hereneco egunean reſuſcitatu içan da hiletaric: Igan içan da ceruetara: Iarria da Iainco Aita bothere-gucitacoaren eſcuinean: Handic ethorteco da vicién eta hilén iudicatzera. Sinheſten dut Spiritu ſaindua baithan: Sinheſten dut Eliça ſaindu catholicoa: Sainduén communionea: Bekatuén barkamendua: Haraguiaren reſurrectionea: Vicitze eternala. Amen.*

Promettatzen duçue bada pena eta diligentia eçarriren duçuela haour horren iracaſten, erran den doctrina hunetan gucian: eta generalqui Teſtamentu çaharreco eta berrico Scriptura ſainduan den doctrina gucian, hura ençun eta recebi deçançát Iaincoaren eguiazco hitz cerutic igorri anço. Guehiago, exhortaturen-ere baduçue eta auiſaturen, Iaincoac bere * Leguean eman draucun reglaren araura vicitzera: cein baita bi punctu hautan: * Onhets deçagun Iaincoa gure adimendu, gure bihotz eta ahal guciaz, eta gure hurcoa, gure buruac beçala. Halaber, Iaincoac bere Prophetéz eta Apoſtoluéz eguin drauzquigun admonitionén eta auiſuén araura, bere guthiciéy guibela emaiten drauelaric, eta heçaz renuntiatzen duelaric, dedica eta applica deçan bere burua, Ieſus Chriſt Iaunaren icenaren glorificatzera, eta bere hurcoaren edificatzera.

Exo.20.1:6
Deut.6.5.
Matth.22.37
Marc, 12.30.
Luc.10.27

*Promeſſa eguin ondoan, icena haourrari emaiten çayó: eta guero Miniſtreac batheyatzen du dioela.*

N. Nic aut batheyatzen Aitaren, eta Semearen, eta Spiritu ſainduaren icenean.

*Gucia erraiten da goraqui guciéc aditzen duten lengoagez, ceren han den populu guciac, behar baitu içan teſtimonio, han eguiten diraden gaucéz: hunetacotzat da neceſſario additzea, eta guciac guerotic guerora confirmago eta edificago ditecençat, eçagutuz eta orhoituz, ceric den batbederac bere Baptiſmotic duen fructua eta probetchua.*

*Badaquigu nola anhitz berce ceremoniaric-ere eguiten obi cen iragan demboretan, eta eztugu vkatzen hec haratzinadanico diradela. Baina ceren guiçonén placerera, edo cerbait conſideratione arinagatic eridenac baitirade: nolaz baita-ere, ceren, Iaincoaren hitza gabe ordenatuac eta eçarriac baitirade, eta ikuſſiric ecen ſuperſtitione anhitz hetaric ilki içan dela, eztugu dudaric ez difficultateric eguin hayén kencera, populua Ieſus Chriſtgana chuchengui ioaitetic harçara ahal leçaqueen impedimenduric ez licençat. Eta lehenic, gauça claroa da, ecen Iaincoaz ordenatu ez, ez manatu etzaicun gucia, gure libertatean dela. Guehiago, gure edificationetan edo confirmationetan eztén gauçaric Eliçán eztela recebitzeco, eta halacoric recebitu içan den gucia vtziteco eta kenceco dela daducagu. Eta eceinere comparatione gabe vtzitecoago eta kencecoago dirade idolatriataco eta opinione falſutaco inſtrument beçala diraden gauça guciac: eta halacoric batre ſuffritzeco-ere ezta. Gauça ſegura da ecen chreſma, tortcho, capa eta berce halaco pompa eta maneretaric batre, eztela Iaincoaz ordenaturic içan, baina guciac gui-*

*gonéz emendatú eta eratchequi içan diradela. Eta, daccussagun beçala, az guenecotz hartara ethorri içan da gauça, non guehiago nehor hetan arrastatu içan baita, eta estima handitanago munduac eduqui vkan baititu hec, ecen ez Iesus Christen ordenança bera. Eta haur vka-ere ecin daitena da nola guc, Iesus Christec ordenatu, haren Apostoluéc iracatsi eta Eliça primitiuoan vsatu vkan duten batheyatzeco forma bera daducagun: eta hunen gainean, bercez nehorc ecin reprotcha ez accusa ahal gaitzaque, Iaincoa bera baino çuhurrago içan nahi ez garenaz baicen, ecen hare baçaquian cer behar cen eta cembatez asco cen.*

# CENAREN CELEBRATZECO FORMA.

*Lehenic iaquiteco da ecen Cená celebraturen den aitzineco igandean populuari haur denuntiatzen eta declaratzen çayola: lehenic, batbedera prepara dadin dignez qui eta bide den reuerentiarequin haren recebitzera: guehiago, nehorc ez titzan haourrac presenta, baldin vngui instruituac eta iracatsiac eta Eliçán bere fedeaz professione eguinác ez padirade: fineán, baldin cembeit estrangér oraino ruderic edo vngui instruitu gaberic han balitz, halacoac presenta ditecen aitzinetic particularqui instrui ditecençát. Cena eguiten den egunean Ministreac predicuaren finean harçaz mentione eguiten du, edo hala behar dela badacussa, predicu gucia-ere harçaz eguiten du, populua iracatsi deçançát, cer Iaunac mysterio hunez significatzen eta aditzera emaiten draucun, eta cer moldez batbederac hura recebitu behar duen.*

*Guero othoitzác eta fedearen confeßionea eguin diradenean, Ministreac populu guciaren icenean testifica deçançát, ecen guciác Christen doctrinán eta religionean vici eta hil nahi diradela, hunela erraiten du guciéc dançutela, goraqui.*

DAnçugun nola Iesus Christec ordenatu vkan drau-cun bere Cena saindua, Corinthianoetaratco lehen Epistolaren hamecagarren capituluan S. Paulec erraiten duen beçala.

Recebitu vkan dut, dio, Iaunaganic, eman-ere draucedana, nola Iesus Iaunac, traditu içan cen gauean, hartu çuen oguia: eta gratiác rédaturic hautsi vkan çué eta erran ceçan, Har eçaçue, ian eçaçue: haur da ene gorputza, cein çuengatic hausten baita: haur eguiçue ene memoriotan. Halaber copa-ere har ceçan, affaldu cenean, cioela, Copa haur da Testamentu berria ene odolean, haur eguiçue noiz-ere eguinen baituçue ene melean, haur eguiçue noiz-ere eguinen baituçue ene memoriotan. Ecen noiz-ere ianen baituçue ogui haur, eta copa haur edanen, Iaunaré herioa denuntiaturen du-

çue. Halacotz, norc-ere ianen baitu ogui haur, edo edanen Iaunaren copa haur indignoqui, hoguendun date Iaunaren gorputzaren eta odolaren. Phoroga beça bada batbederac bere burua, eta hunela ogui hartaric ian beça, eta copa hartaric edan, ecen iaten eta edaten duenac indignoqui, bere condemnationea iaten eta edaten du diſcernitzen eztuelaric Iaunaren gorputza.

Ençun dugu, haourrideác, nola gure Iaunac Cená bere diſcipuluequin eguin vkan duen: eta harçaz eracuſten draucu, eçen eſtrangerac, erran nahi da, hareu fidelén compainiaco eztiradenac, eztiradela hartara recebitzeco. Halacotz regla hunen araura, Ieſus Chriſt gure Iaunaren icenean eta authoritatez, excommicatzé ditut Idolatre, blaſphemari, Iaincoaren menoſpreciaçale, heretico, eta Eliçaco vnitatea hautſi nahiz, ſectác ap part eguiten dituzten gende guciac, deſperiuruac, aitamén eta bere aitzinecoén eta guehienén deſobedient diradenac, ſeditioſoac, mutinac, vkalcariac, guicerhaileac, reuoltariac, adulteroac, paillartac, ohoinac, auaritioſoac, harrapariac, hordiac, gormantac, vicitze ſcandaloſoa daramaten guciac: eta halacoey publicoqui declaratzé çaye, mahain ſaindu hunetara eztatocen, Ieſus Chriſt gure Iaunac bere domeſticoey eta fideley baicen emaiten eztrauzten vianda ſaindu hauc pollui eta ſatſu eztitzatençát.

Bada S. Paulen conſeilluaren eta exhortationearen araura, batberac phoroga eta examina beça bere conſcientiá, eta çorrotzqui gogoa beça eya eguiazco dolubat duenez bere bekatuéz, eta heçaz deſplacer duenez, hemendic harát ſainduqui eta fidelqui Iaincoac manu beçala vicitzeco deſirequin eta vorondaterequin. Eta gauça guciaren gainetic gogoa beça batbederac, eya bere confidança gucia Iaincoaren miſericordián arraſtatua eta eçarria duenez, eta bere ſaluamendu gucia Ieſus Chriſt baithan oſſoqui bilhatzen duenez, eta eya etſaigoa eta gaitzerizte guciac vtziric, anayetaſſunezco amorioan eta charitatean bere hurcoequin vicitzeco gogo eta vorondate ona duenez.

Baldin teſtimoniage haur Iaincoaren aitzinean gure

bihotzetan badugu eztaguigula dudaric batre, baina ſegura gaitecen, ecen Iaincoac bere haourretan aboatzen eta recebitzen gaituela, eta Ieſus Chriſt Iaunac bere mahain ſaindura deitzen eta gomitatzen gaituela, eta bere diſcipuluequin communicatu vkan duen Sacramẽdu ſaindu hura bera preſentatzen draucula.

Eta anhitz variabletaſſun, fragilitate eta miſeria gure buruëtan ſenditzen eta eçagutzen badugu-ere, hala nola, fedea perfect vkan gabez, eta incredulitatera eta diffidentiatara ſuiet eta inclinatu içanez: edo, Iaincoaren cerbitzura behar beçala affectionatu içã gabez, eta gure haraguiaren guthiciequin bethi iharduqui eta bataillatu beharrez: guciagatic-ere Iaunac bere Euangelioaren gure bihotzetan imprimitzeco eta engrauatzeco gratia eguin vkan draucunaz gueroz, incredulitate eta diffidentia guciari reſiſtitzeco, eta gure haraguiaren guthicién renuntiatzeco enſeiubat eta deſirbat eman draucunaz gueroz, Iaincoaganaco eguimbideari eta haren manamenduey garreiztençát: ſegura gaitecen frangoqui, ecen gutan diraden vitio eta imperfectione guciec, eztutela empatchaturen, recebi ezgaitzan eta mahain ſpiritual hunetan parte vkaiteco digne eguin ezgaitzan. Ecen ezgara huna ethortẽ gueuroc baithan perfect eta iuſto garela proteſtatzera eta declaratzera: baina-aitzitic gure vicitzea eta içatea Ieſus Chriſt baithan bilhatzen dugunean, gure ethorte berez herioan, eta damnationean garela confeſſatzen eta eracuſten dugu. Daquigun bada ecen Sacramendu ſaindu haur barnez eta ſpirituz eri diradenén medicinabat eta remediobat dela: eta gutaric Iaunac galdeguiten duen dignitate gucia dela, gure buruac eguiazqui eçagut ditzagun, eta cinez eta mingui gure bekatuéz dolu eta vrriqui dugun, eta gure atſeguin, bozcario eta contentamendu gucia hura bera baithan dugun.

Lehenic bada ſinhets ditzagun, Ieſus Chriſtec berac Eguia bakoitz, falta ecin daitenac, bere ahotic eguin drauzquigun promeſſac, baitirade ecen bere gorputzeã eta odolean eguiazqui participant eguin nahi gaituela complituqui hura poſſedi deçagunçát, hala non hura

gutan vici den eta gu hartan. Eta guc oguia eta mahat-
ſarnoa baicen ez ikuſtenagatic, ezteçagula duda, eztu-
ela ſpiritualqui gure arimetan complitzen exteriorqui
eta campotic ſigno viſible hauçaz eracuſten draucun gu
cia, baita, ecen hura dela ogui celeſtiala vicitze eterna-
lecotzát, gure arimén hatzeco eta bazcatzeco. Ezgare-
la bada ingrat eta eçagutze gabetaco Iaunaren ontaſſun
handia baithara, ceinec mahain ſaindu hunetan bere
abraſtaſſun eta theſaur guciac deſplegatzen baititu, hec
guri cómunica eta diſtribui dietzagũçát. Ecen berac be
re buruaré guri emaiteaz, teſtificatzé draucu, ecen harc
duen gucia gure dela. Recebi deçagun bada Sacramen-
du ſaindu haour bahi eguiazcobat beçala, ſeguranҫatan
nola haren herio paſſionezcoaren inda rra eta verthutea
iuſtitiatacotz imputatzen eta contatzen çaicun, harc
iragan duen gucia gueuroc gure perſona proprietan ſuf-
fritu eta iragan baguendu beçala. Ezgarela bada hain
conditione eta ſorte gaitzetaco, non harçara gaitecen
eta ihes daguigun, Ieſus Chriſtec bere hitzaz hain eme-
qui eta dulcequi gomitatzen gaituenaz gueroz. Baina e-
guiten draucun dohain precioſo hunen dignitatea eta
valioa conſideratzen eta piçatzen dugula, preſenta ga-
quitzan affectione bero batequin, hunen recebitzeco
digne eguin gaitzançát.

Hunetaracotz altcha ditzagun goiti gure ſpirituac e-
ta bihotzac, Ieſus Chriſt bere Aitaren glorián den le-
kura, nondic ethorteco-ere baita gure arimén redem-
ptionetan. Ezgaiztecela bada, beguiz ikuſten eta eſcuz
hunquitzen ditugun lurreco element corruptible hau-
tan arraſta, Ieſus Chriſt oguian edo mahatſarnoan bar-
na baliz beçala. Ecen halatán içanen dirade gure arimác
haren ſubſtantia beraz haciac eta viuificatuac, gauça
terreſtre hauçaz gorago, cerurano altchatuac diraten
orduan, Iaincoa habitatzen den reſumara hel eta ſar
ditecençat. Contenta gaitecen bada oguia eta mahat-
ſarnoa ſignotan eta teſtimoniagetan emaiten çaizqui-
guncan, han eguiá ſpiritualqui bilhatzen dugularic, non
eridenen dugula Iaincoaren hitzac promettatzen bai-
traucu. Iaincoac gratia daguigula. Amen.

*Haur eguin eta, Ministréc distribuitzen drautzate populuari oguia eta copá, aitzinetic aduertituric honestoqui, reuerentiarequin eta ordenança onean bide beçala datocen. Bizquitartean cembeit psalmu cantatzen da, edo Sacramenduari dogocan gauçaric cerbait Scripturatic iracurtzen.*

*Finean gratiác eta esquerrac rẽdatzen dirade lehen erran den beçala.*

*Badaquigu cer scandalizatu içateco occasionea, guc eguin dugun cambio hunetaric, anhitzec hartu vkan dutén. Ecen, ceren Meçá haraitzinadanic halaco estimatan içan baita non mundu gaiçoac baitzaducan ecen Christinotassuneco puncturic principalena hura cela, anhitzec estranio eriden du, nola hura choil dena den beçala vtzi eta kendu vkan dugun.*

*Eta halacotz gure raçoinac eztaquizquitenéc, eta behar beçala iracatsiac eztiradenéc, vste dute ecen Sacramendua deseguin vkan dugula. Baina baldin nehorc considera badeça guc daducaguna, harc du eridenen eta eçaguturen ecen Cena sáindua bere eguiazco eta ordenatu ceneco tenorera eta moldera itzuli vkan dugula. Eta haur hala dela iaquin nahi duenac considera beça, cer conformitate den Meçaren, eta Iesus Christec ordenatu vkan duen Cenaco formaren artean. Gauça claroa da ecen hambat differentia dela nola egunarẽ eta gauarẽ artean. Eta oraingo hunetan materia hunen luçaqui tractatzeco intentionerie ezpadugu-ere, ignorantiaz scandaliza ahal litezquenacgatic iragaitez beçala mentione eguin nahi vkan dugu. Ecen ikussi vkan dugunean Iaunaren Sacramendua hambat abusionez eta corruptionez eceztaturic eta corrumpituric, gaitz haur remedia ledinçát, bortcha içan çaicu anhitz gauça gaizqui iarriren, ez pa vsage gaichtotara itzuliren cambiatzera eta muthatzera. Eta hunetacotzat eztugu moyen hoberic ez moldezcoagoric eriden, Iesus Christec berac ordenatu çuẽ moldera itzultzea baino, ceini fidelqui eta leyalqui, agueri den beçala iarreiquiten baiquaizquio. Eta haur da S. Paulec eracusten draucun reformationea.*

# EZCONCAREN CELEBRATZECO FORMA.

*Iaquin behar da ecen ezconçabat celebra daiten baino lehen, elkarren ondoan hirur igandez aitzinetic publicatzen dela Eliçán, baldin cembeit impedimendu nehorc balaqui gauçá aitzinaratuago gabe, erraitera ethor dadinçát: edo nehorc interesic balu opposa dadinçát.*

*Guero spos biac predicu hatsean presentatzen dirade: eta Ministrea hatsen da forma hunetan.*

Gvre aiutá dela cerua et a lurra eguin dituen Iaunaren icenean. Amen.

Iainco gure Aitac, cerua eta lurra eta hetan diraden gauça guciac creatu cituenean, crea eta forma ceçan guiçona bere imaginara eta irudira, lurreco bestién,

itsassoco arrainén eta aireco chorién gainean dominatione eta iaurgoa luençát:eta guiçona creatu vkã çuen ondoan erran ceçan,* Ezta on guiçona bera den, daguiogun aiutabat bera irudiric. Eta eçar ceçan Iaunac lo eguiteco guthicia handibat Adamen gainera, guero hura lo cetzala har ceçan haren seihets heçurretaric bat eta crea ceçan Eua:harçaz aditzera emaiten çuela ecen senharra eta emaztea eztiradela gorputzbat, haraguibat,eta odolbat baicen.* Halacotz,guiçonac ditu vtziten aita eta ama, eta bere emazteari iunctatzen çayó, eta hari on eritzi behar drauca, Iesus Christec bere Eliçari on eritzi draucan beçala:erran nahi da,eguiazco fideley eta Christinoey,ceinacgatic hil içã baita.* Emazteac-ere cerbitzatu eta obeditu behar du bere senharra saindutassun eta honestate orotan:ecen senharraren suiectioneco eta manuco da, harequin vici deno.* Eta ezconça saindu Iaincoaz ordenatu haur da halaco verthute taco,nõ haren causaz senharrac ezpaitu bere gorputzaren botherea,baina emazteac: emazteac-ere halaber eztu bere gorputzaren botherea, baina senharrac * Bada Iaincoaz iunctatuac ecin separa daitezque, demboratacotz ezpada bataren eta bercearen consentimenduz,baruretan eta orationetan emplega ditecencát, beguiratzen diradelaric Satanez tentatu içatetic incontinentiaz. Eta halacotz behar dirate elkargana itzuli.Ecen paillardiçari ihes eguiteagatic, batbederac behar du bere emaztea,eta emaztetaric batbederac bere senharra:* halaco maneraz non continent içateco dohaina eztuten guciac, Iaincoaren manamenduz ezcõcera obligatuac baitirade, Iaincoarẽ temple saindua, * erran nahi baita,gure batbederaren gorputzac, viola eta corrumpi eztitecençát.* Ecen gure gorputzac Iesus Christen membro diradenaz gueroz,cein gauça indignea eta bidebaguezcoa liçate,baldin paillarda baten membro eguin balitez?Halacotz,saindutassun gucitan nehorc beguiratzeco ditu hec.* Ecen baldin nehorc Iaincoaren templea viola badeça,Iaincoac deseguinen du haina.

Cuec bada(spos bata eta bercea cein bere içenez dei-

*Gen 2.18.* *Gen. 2. 24.* *Mat. 19.5.* *Ephe.5.31.* *Colos.3 19.* *1.Tim.2.11* *1.Pier.3.1.* *Heb.13.4.* *Gen.3.16.* *1.Cor.7.4.* *Mat. 19.6.* *1.Cor.7.5.* *1.Cor.7.9.* *1.Cor.3.16* *1.Cor.6.15* *1.Cor.3.17.*

thuric) N. N. eçagutzen duçuelaric ecen Iaincoac ezconçaren gainean hala ordenatu vkan duela, nahi çarete vici Iaunac hambat ohoratu vkan duen ezcõçazco statu saindu hunetan? baduçue çuec hemen Iaincoaren cõgregatione sainduaren aitzinean çuen presentiáz eracusten duçuen beçalaco proposbat, eta nahi duçue hala approba eta lauda dadin?

*Ihardesten duté,* Bay.

*Ministreac.*

Hemen present çareten gucioc testimonio hartzen çaituztet: eta othoitz eguiten drauçuet orhoit çareten. Guciagatic-ere baldin nehor bada hauen artean impedimenduric batre daquianic, edo hautaric batre bercerequin ezcondua denez, erran deçan.

*Nehor opposatzẽ ezpada Ministreac erraitẽ du hunela.*

Nehor opposatzen denic, ez impedimenduric batre eztenaz gueroz, Iainco Iaunac berac eman drauçuen propos saindua confirma deçala, eta çuen hatsea dela cerua eta lurra eguin dituen Iaunaren icenean. Amen.

*Ministreac guiçonari minço çayola, erraitẽ du hunela.*

Cuc N. hemen Iaincoaren eta haren congregatione saindu hunen aitzinean confessatzen duçu eta aithortzen, ecen çuc hartu duçula eta hartzen çure emaztetan eta spostan N. hemen presentean dena, eta duçu promettatzen hala eduquiren, onhetsiren, eta entretenituren duçula fidelqui eta leyalqui, senhar eguiazco eta fidel baten emazteaganatco eguimbidea den beçala, sainduqui horrequin vici çarelaric, fede eta leyaltate gauça gucietan beguiratzen draucaçularic, Iaincoaren hitzaren eta Euangelio sainduaren araura.

*Ihardesten du,* Bay.

*Guero emazteari minço çayola, erraitẽ du. Ministreac.*

Cuc N. hemen Iaincoaren eta haren congregatione saindu hunen aitzinean confessatzen duçu eta aithortzen, ecen çuc hartu duçula eta hartzen çure senhar legitimotan N. presentean dena, eta promettatzen draucaçu horren suiectionean çarelaric hori onhetsiren, obedituren eta cerbitzaturen duçula, sainduqui horrequin vici çarelaric, fede eta leyaltate gauça gucietã be-

guiratzé draucaçularic, emazte fidel eta leyal batec bere ſenharrari, Iaincoaren hitzaren eta Euangelio ſainduaren araura eguiteco draucan beçala.

*Ihardeſten du,* Bay.

*Miniſtreac.*

Statu ſaindu horretara deithu çaituzten Iainco Aita miſericordioſoac, Ieſus Chriſt bere Seme Iaũ bere preſentiáz ezconçá ſanctificatu çuenaré, eta han bere Apoſtoluén aitzinean bere lehen miraculua eguin çuenaren cómorecatic, diçuela bere Spriritu ſaindúa, gogo eta cóſentimendu batez hura çuen mende gucian cerbitza eta ohora ahal deçaçuençat. Amen.

Ençuçue Euangelioa, daquiçuençát eya nola nahi duen Iaunac ezconçá beguira dadin, eta nola fermu eta parti ecin daiten beçalaco den S. Mattheuen hemeretzigarren capituluan ſcribatua dago en beçala.

Eta Phariſeuac hurbil cequizquion hari, tentatzen çutela, eta ciotſatela, Guiçonari permettitzen çayo ceinere den gauçagatic bere emaztearen vtzitera? Harc ihardeſten duela, dioſte, Ala eztuçue iracurri ecé guiçona eguin çuenac hatſetic, arra eta emea eguin cituela? Eta erran çuela, Halacotz vtziren ditu guiçonac aita eta ama, eta iunctaturen çayó bere emazteari, eta biac haraguibat içanen dirade. Bada Iaincoac iunctatu duena, guiçonac ezteçala ſepara.

*Gen. 1.27 eta 2.24.*

Sinhets itzaçue Ieſus Iaunac berac erran dituen hitz ſaindu hauc, Euangeliſtác teſtificatzen duen beçala: eta ſegur educaçue ecen Iainco Iaunac bere ordenançazco ezconça ſainduaz bat eguin çaituztela. Bada, çareten vici elkarrequin ſainduqui, Iaincoac manu beçala batac berceari charitate, fede eta leyaltate beguiratzen draucaçuela.

*Eta hunetacotzat othoitz eguinen draucagu guciéc gogo batez gure Iainco Aita Iaunari.*

IAinco Iaun bothere, ontaſſun, eta çuhurtzia gucitacoá, lehen hatſetic ikuſſiric ecen etzela on guiçona bera licén, creatu vkan draucac bera bay irudi aiutabat, bay eta ordenatu biac bat liradé, affectionatuqui othoitz eta ſupplicatione eguiten drauagu, ezconçazco ſtatu ſaindura hauc deithu nahi vkan dituanaz gueroz, eure

gratiatic eta ontassunetic nahi drauean partitu, eta eure Spiritu saindua igorri, fede eguiazcotan eta fermutan sainduqui hire vorondatearen araura vici diradençát, affectione gaichto guciari garaitzen çaitzala, eta honestatez eta castetatez bercén edificationetan exemplu on eracusten dutela, eure benedictionea emaiten drauealaric, eure cerbitzari fidel Abrahami, Isaac-i, eta Iacob-i beçala: hire gogaraco eta ohoretaco leinuric procrea deçaten, hi cerbitzatzen eta laudatzen autela, eta hartara hel ditecenean, bere haourrac iracasten eta hatzen dituztela hire laudoriotã eta ohoretan, hurcoaren probetchutan eta hire Euangelioaren auançamendutan eta exaltationetan. Ençun gaitzac, othoi, hautan guciotan, Aita misericordiaz betheá, Iesus Christ eure Seme maite gure Iaunaren icenean. Amen.

Iainco Iaunac gratia oroz compli çaitzatela, eta ontassun eta eguimbide orotã elkarrequin luçaqui eta sainduqui vicitzeco gratia diçuela, eta guero bere seculaco glorián Iesus Christ bere Seme gure Iaunaren icenean recebi çaitzatela. Amen.

# ERIEN VISITATZEAZ.

MInistre fidel eta eguiazco baten officioa da, ez solament pastor ordenatu içan deneco populuaren publicoqui iracastea: baina bay eta eguin ahal deçan lekurano particularqui-ere batbederaren admonestatzea, exhortatzea, reprehéditzea eta consolatzea. Eta baldin seculan Christinoac gure Iaunaren consolatione spiritualen mengoaric badu, haren escuaz afflictionez visitatzen eta cossiratzen denean du, edo dela eritassunez edo berce gaitzez, eta principalqui hil behar denean: ecen orduan egundano baino bere conscientiác hertsenago duque, hambat Iaincoaren iugemenduaz, ceinetan baitacussa bertan comparitu behar duela, nola deabruaren iauquimenduéz, cein orduan behinçat bere ahal guciaz enseyatzen baita nehoren confusionetara egoizten. Halacotz, Ministre baten eguimbidea da erién

visitatzea, eta Iaunaren hitz sainduaz consolatzea, aditzera emaiten drauelaric ecen hec iragaiten eta suffritzen duten gucia Iaincoáren escutic eta prouidentia onetic heldu dela, eta nola harc eztrauen bere fideley deus igorten hayen hobeagoagatic eta probetchuagatic baicen. Eta hunetacotzat harturen duque Scripturaco passagetaric, occasioneac eta materiac emaitẽ duqueen beçala. Eta baldin badacussa ecen eria guciz gaizqui dela eta periletan, orduan consolatione handiagoric eta frangoagoric emaiteco drauqueo: eta haur, halacoa baithan ikussiren duqueen affectionearen araura: hala nola, baldin herioac icitzen duquela eta haren beldur datela badacussa: viciqui eracuts dieçón, nola herioan eztén deus, Iesus Christ Iauna guida eta beguirale duten fidelençat icigarriric, nola harc herioaz bera sarthu dẽ vicitzera guidaturen eta eramanen dituen: eta berce hunelaco remonstrançaz edequiteco drauqueo Iaincoaren iugemenduaz patientac ahal luqueen beldur gucia. Eta baldin badacussa ecen eriac eztuela asco sendi bere bekatuén handitassuna, orduan çorrozqui eracusteco drauqueo ceric den Iaincoaren iustitia handia, nola nehorc haren aitzinean ecin iguriqui deçaqueen, haren misericordiaz baicen, eta Iesus Christ bere saluamendutan eta remedio bakoitzetán bessarcatuz eta emplegatuz baicen. Eta baldin berce aldera bere conscientián herstua badacussa, eta bere bekatuén causaz icitua eta trublatua Bada: behar da Iesus Christ eracuts dieçón, eta demon claroqui aditzera, nola bere buruëtan ez bere obretan fida eztiradenéc, baina harengana fedez retiratzen diraden guciéc hura baithan remedio gucia erideiten dutén. Bada, Ministre on eta fidel batec consideratzeco eta bilhatzeco du cein den eri baten, ezpa affligitu baten consolatzeco moyenic hobena, eta bethiere gucia Iainco Iaunaren hitzetic. Eta are baldin Ministreac algoaric badu, on behar gaiço affligitu diradenén consolatzeco edo aiutatzeco, eztu deus guppida vkaiteco, bercéy charitatezco eta eguimbidezco exemplu eracusten drauelaric.

# CATECHISMEA,

## CEIN ERRAN NAHI BAITA, IESVS CHRISTEN doctrinán haourrén iracasteco formá, non Ministreac interrogatzen baitu, eta haourrac ihardesten.

### FEDECO ARTICVLVEZ.

*Ministrea.*

CEIN da vicitze humanoaren fin principalá.

*Haourra.*

Iaincoaren eçagutzea.

*Gure vicitzearen fina.*

M. Cergatic dioc hori?

H. Ceren harc creatu eta mundu hunetan eçarri vkan baiquaitu, glorifica deçagunçát. Eta segur raçoin da, gure vici gucia haren gloriatan emplega deçagun.

M. Eta cein da guiçonaren on subiranoa?

H. Erran dena bera.

M. Cergatic Iaincoaren eçagutzea on subirano deitzen duc?

*Guiçonén on subiranoa.*

H. Ceren hura gabetaric dohacabeago baita gure conditionea ecen ez abre brutalena.

M. Beraz gauça claroa duc, gure dohacabetassunic hãdiena dela, Iaincoac manu beçala ez vicitzea?

H. Eguia da.

M. Baina cein da Iaincoaren eguiazco eta bidezco eçagutzea?

H. Hari bere ohorea renda daquionçat eçagutzen dugunean.

M. Nola da haren eguiazqui ohoratzeco manera?

H. Gure confidança gucia hura baithan eçar deçagun, haren vorondateari garraitzala hura cerbitza deçagun, hura baithan saluamendua eta ontassun gucia bilhatzen dugularic: eta ontassun gucia harenganic heldu dela

*Iaincoaren eguiazqui ohoratzeco manera, laur punctutan.*

bay bihotzez bay ahoz eçagut deçagun.

*Ministrea.*

*2. Igandea.* BADA gauça hauc bata bercearen ondoan, eta luçaquiago declara ahal ditecençat cein da hic erran dituan punctuetaric lehena?

*Lehen punctua.* H. Gure confidança gucia hura baithan eçar deçagun.

M. Nolatan hori eguin ahal daite?

H. Lehenic, bothere gucitaco eta perfectoqui on dela eçagut deçagun.

M. Eta asco da hori?

H. Ez.

M. Cergatic ez?

H. Ceren ezpaicara digne harc bere botherea gure aiutatan eracuts deçan, ez bere ontassunaz gu baithara vsat deçan.

M. Cer bada guehiago behar da?

H. Gutaric batbedera segur den, ecen harc on daritzala, eta Aita içan nahi çayola eta Saluadore.

M. Nondic hori daquiquegu?

H. Haren hitzetic, ceinetan declaratzen baitraucu bere misericordia Iesus Christez, eta seguratzen baiquaitu bere gureganaco amorioaz.

*Confidança vkaiteco fundamenta Ioan. 17. 3.* M. Beraz eguiazco confidançaren Iaincoa baithan eçarteco fundamenta eta lehen hatsea, duc Iainco Aitaren eçagutzea Iesus Christ Iaunean.

H. Hala da.

M. Orain eçagutze horren sommarioa cein den, hireganic labursqui ençun nahi niquec.

H. Hura da Christino guciéc eguiten duten fedearen confessionean: cein communzqui Apostoluén symboloa deitzen baita: ceren hura Christinotassunaren lehen hatsetic bethiere eduqui içan baita, eta ceren Apostulu berén ahotic, edo hayen scribatuetaric ilkia eta hartua baita.

M. Eya dançugun hartan erraiten dena.

*Apostoluẽ symboloa.* H. *Sinhesten dut Iainco Aita bothere gucitaco ceruaren eta lurraren Creaçalea baithan. Eta Iesus Christ haren Seme bakoitz, gure Iauna baithan: cein concebitu içan baita Spiritu sainduaganic. Sorthu Maria virginaganic: Pontio Pilateren azpian paßionatu, crucificatu, hil eta ehortze: Iautsi içan da iffernuetara: Hereneco egunean resuscitatu içan*

*da hi-*

*da hiletaric: Igan içan da ceruëtara: Iarria da Iainco Aita bothere-gu citacoaren eſcuinean: Handic ethorteco da vicien eta hilén iugeatzera. Sinheſten dut Spiritu ſaindua baithan: Sinheſten dut Eliça ſaindu catholicoa: Sainduén communionea: Bekatuén barkamendua: Haraguiaren reſurrectionea: Vicitze eternála. Amen.*

*Miniſtrea.*

PVnctu horietaric batbedera hobequi adi dadinçát, cembat partetara confeſſione hori partituren dugu? *3. Igandea*

H. Laur principaletara.

M. Eya dançugun nola.

H. Lehena Iainco Aitaz içanen da. Bigarrena, Ieſus Chriſt haren Semeaz, eta harc guregatic eguin vkan duen redemptionearen hiſtoriaz. Hirurgarrena, Spiritu ſainduaz. Laurgarrena, Eliçaz, eta Iaincoac hari eguin drauzcan gratiéz.

M. Iaincobat baicen ez içan eta, cergatic hirur aippatzen dituc, Aita, Semea, eta Spiritu ſaindua?

H. Ceren Iaincoaren eſſentia bakoitz batetan conſideratu behar baititugu, Aita, lehen hatſea eta gauça gucien lehen cauſá beçala: guero Semea, cein baita haren Sapientia eternala: eta Spiritu ſaindua, cein baita haren verthutea eta puiſſançá, hura baithan bethi dagoelaric creatura guctietara hedatzen dela. *Trinitateaz.*

M. Horrez erran nahi duc ecen eztela inconuenientic batre, baldin diuinitate bakoitz batetan comprehenditzen badítugu hirur perſona hauc diſtinctoqui, eta halacotz Iaincoa eztela partitzen.

H. Hala da eguia.

M. Erran eçac orain lehen partea.

H. Sinheſten dut Iainco Aita bothere gucitaco ceruaren eta lurraren Creaçalea baithan. *Lehen partea.*

M. Cergatic deitzen duc Aita?

H. Lehenic Ieſus Chriſten conſiderationez, cein baita haren Hitz eternala, harenganic dembora gucién aitzinetic engendratua, guero mundura igorri içanic haren Seme declaratu içan da. Baina ceren Iaincoa Ieſus Chriſten Aita baita, handic daquigu gure-ere badela. *Aita.*

M. Nola aditzen duc bothere gucitacoa dela?

H. Ezta erran nahi botherea baduela, hura emplegatzen ezpalu beçala: baina errã nahi da ecen creatura gu- *Iaincoa bothere gucitaco dela, nola aditzeco.*

*Iainco bothege gucitaco dela nola aditze co.*

ciac bere escuan eta suiectionean dituela: gauça guciac bere prouidentiáz dispausatzen dituela: mundua bere vorondateaz gobernatzen duela: eta cer-ere eguiten baita, nola placer baitu hala guidatzen duela.

*Iaincoaren botherea ez alfer egon. Psal.104.2 rom.1.20.*

M. Beraz, hire erranaren araura, Iaincoaren botherea eztiagoc behin-ere alfer, baina estimatzen duc hic ecen bethiere escua lanean duela: eta deus eztela eguiten har baicen, edo haren congitez eta ordenançaz baicen.

H. Hala da eguia. *Ministrea.*

*4. Igandea.*

C Ergatic erraiten duc guero, ecen ceruaren eta lurraren Creaçale dela?

*Iaincoaren contemplatzeco miraila.*

H. Ceren, nola bere obrez manifestatu içan baitzaicu: hala guc-ere hetan hura bilhatu behar baitugu. Ecen haren essentiá gure adimenduac ecin comprehendi deçaque. Baina mundua dugu mirailbat beçala, ceinetan cótempla ahal baiteçaquegu eçagutezco mengoa dugun becembat.

M. Cerua eta lurra çrraiten duanean, eztituc berce goitico creaturac-ere aditzen?

H. Bay-aitzitic: baina bi hitz hetan comprehenditzen dirade creatura guciac, ceren guciac baitirade ceruco edo lurreco.

M. Cergatic Iaincoa deitzen duc Creaçale solament, ikussiric ecen vnguiz-ere handiago dela creaturén entzea eta bere statuan conseruatzea, ecen ez hayén behin treteni creatzea?

*Iaincoaren prouidentiáz.*

H Creaçale erraiten dugunean-ere ezta erraã nahi, ecẽ Iaincoac behin bere obrac hala creatu dituela non guehiagoric heçaz artharic eztuen, baina aditu behar da, lehen hatsean mundua nola eguin baitzuen, hala orainentretenitzen-ere duela bere statuan: hala nõ ceruac ez lurrac ez berce creaturac batec-ere ezpaitu içateric, ez ezpaitirade consistitzen haren verthutez baicẽ. Guehiago, gauça guciac bere escuã dituenaz gueroz, beraz hetaco gobernamendua eta guehiétassuna-ere badu. Bada ceruaren eta lurraren creaçale den becembateã, aditu behar da, ecen hura bera dela bere çuhurtziáz, ontassunaz eta bothereaz naturaren cursu gucia guidatzen eta gobernatzen duena: vritea eta idortea, babaçuça eta tem-

pestatea, dembora gaitza eta ederra, vrthe assea eta gossea, ossassuna eta eritassuna igorten dituena: somma, gauça guciac bere manuco ditu, heçaz placer duen beçala vsatzeco eta cerbitzatzeco.

M. Deabruéz eta gaichtoéz cer erranen dugu, hec-ere haren manuco dirade? * — *Deabruez.*

H. Hec bere Spirituaz gobernatzen ezpaditu-ere, hala bere bothereaz bridatuac beçala dadutza, non higuiere ecin baititezque harc permittitzen drauen becembat baicen. Etare bere vorondatea eraguiten draue, hayen intentionea eta deliberationea hala ez içanagatic.

M. Gauça horren iaquitetic cer emendio heldu çaic?

H. Gucizco handia. Ecen gaizqui liçate guçaz, baldin deabruéc eta gaichtoéc Iaincoaren vorondatearen contra deusen eguiteco bothereric baluté. Eta are seculan gure bihotzetan paussuric ezguenduque, ceren bethiere hayén perilean baiquinande: baina frangoqui gure bihotzetan sossega eta aleguera ahal gaitezque, daquigunean ecen Iaincoac hala bridá herstua diadutela, non deus haren congitarequin baicen ecin baitaidite: eta principalqui ikussiric ecen bera gure beguirale eta defensor içanen dela promettatzen draucula.

*Ministrea.*

GAtocen orain bigarren partera. — *5. Igandea. Bigarren partea.*

H. Eta Iesus Christ haren Seme bakoitz gure Iauna baithan.

M. Sommarioqui cer horrec erran nahi du?

H. Ecen eguiazqui eçagutzen dugula, nola Iaincoaren Semea den gure Saluadorea: guero declaratzen du cer moldez harc damnationetaric deliuratu vkan gaituen, eta saluamendua irabaci vkan draucun.

M. Eta cer erran nahi da Iesus.

H. Iesus erran nahi da hambat nola Saluadorea, eta içen haur Ainguerua̋z eman içan çayon, Iaincoaren manamenduz. — *Iesus. Matt. 1.21*

M. Eta horrez badu abantaillic, guiçonez eman içan balitzayo baino guehiago?

H. Bay. Ecen Iaincoac hala dey ledin nahi vkan duenaz gueroz, eguiazqui halaco-ere den necessario da.

M. Eta Christ hitz hunec cer significatzen du?

*Christcer erran nahi.* H. Titulu hunez are hobequi declaratzen da haren officioa. Ecen erran nahi da vnctatu içan dela Aitáz Reguetan, Sacrificadoretan eta Prophetatan.

M. Nola daquic hori?

H. Ceren Scriptura sainduarenᵃ arauez, vnctioneac hirur gauça hautaco cerbitzatzen baitzuen: eta hirurac oro maiz Christi attribuitzen çaizquio.

M. Baina cer olio motaz vnctatu içan da?

H. Ez olio visiblez, lehenagoco Regueac, Sacrificadoreac eta Prophetác beçala, baina Spiritu sainduaren gratiaz, cein baita lehenago exteriorqui eguiten cen vnctionearen eguiá.

M. Ceric da hic dioán Resuma hori?

*Christen resuma.* H. Spiritual: eta consistitzen da Iaincoaren Spirituan eta Hitzean, eta hautaric heldu dirade iustitiá eta vicitzea.

M. Eta Sacrificadoregoa ceric da?

*Christen Sacrificadoregoa.* H. Haur da Iaincoaren aitzinean presentatzeco officioa eta authoritatea, gratiaren obtenitzeco, eta haren gogaraco Sacrificioren offrendatzez haren hiraren appacegatzeco.

M. Iesus Christ nola dioc Propheta dela?

*Christ Propheta.* *Esa.7.14* *Heb.1.1* H. Ceren mundura iautsi içan denean, bere Iainco Aitaren mandatari eta embachadore eracutsi içan baita guiçonac baithara, haren vorondatea munduari bethequi declaraturic, prophetia eta reuelatione guciac acaba, eta compli litzançat. *Ministrea.*

*6. Igandea.* HOrretaric probetchuric batre ethorten çaic?

H. Gucia da gure probetchu handitan. Ecen Iesus Christec dohain hauc guciac recebitu vkan ditu, gu hetan participant eguin guençançat, guciéc haren complimendutic recebi gueneçançat.

*Ioan.1.16*

M. Declara ieçadac hori claroquichiago.

*Eph.4.7* H. IesusChristec Spiritu sainduá bere gratia guciequin perfectionetan recebitu vkan du: gutaric batbederari, Iaincoac beharra dugula dacussan neurriaren eta portionearen araura, gratia hetaric parti eta distribui leçagúçát. Eta manera hunetan, cer-ere on spiritual baitugu,

*Ontaßũguciaren ithurburuaChrist*

gucia ithurri batetaric beçala, harenganic idoquiten eta vkaiten dugu.

M. Eta haren Resumá cer probetchatzen çaicu?

H. Cer probetchatzé? Iesus Christec gu gure conscientietaco libertatean eçarriric, abrastassun spiritualez eta dohainez bethe vkan baiquaitu, iustoqui eta sainduqui vici garençat: halaber bothere-ere eman draucu, gure arimén ardurazco etsayey deabruari, bekatuari, haragui ari eta munduari garaitzeco.

*Christen resumá cer probetchatzen çaicun*

M Eta haren Sacrificadoregoa cer probetchatzé çaicu?

H. Lehenic, ceren hura baita gure Arartecoa, gu bere Aitarequin reconcilia gaitzançat: eta berçalde ceren haren moienez baitugu sartze Iaincoaren aitzinean confidançarequin gure buruën presentatzeco, eta sacrificiotan offrendatzeco gutaric heldu den guciarequin. Eta halatán bere sacrificadoregoan, bere lagun eguiten gaitu.

*Christen Sacrificadoregoa. Heb. 7.25 eta 8.6 eta 9.15 eta 10.11.*

M. Dugun orain Prophetiáz.

H. Propheta içateco officioa Iesus Iaunari eman içan çayonaz gueroz, berén guehien eta doctor licençat: fina da, gu bere Aitaren eta bere eguiaren eçagutze eguiazcora hala erekar gaitzan, non Iaincoaren discipulu domestico eguin baiquaitezque.

*Christen prophetiá.*

M. Hic erraiten duana duc ecen Christ icen hunec hirur officio comprehenditzen dituela, eta hec Iaincoac bere Semeari eman drautzala, hetaric heldu den probetchua bere fideley communica diecençat.

H. Hala da.

*Ministrea.*

*7. Igandea.*

C Ergatic hura Iaincoaren Seme bakoitz deitzen duc ikussiric ecen Iaincoac guciac bere haour deitzen gaituela?

H. Iaincoaren haour içatea, eztugu naturaz, baina adoptionez eta gratiaz, ceré halacotan eduqueiten baiquaitu Iaincoac. Baina Iesus Iauna, cein baita bere Aitaren substantiatic eternalqui engendratua, eta haren essentia bereco: çucen onez Seme bakoitz deitzen da: ecen ezta hura bera baicen naturalqui denic.

*Eph. 1.5. ioan. 1 2. heb. 1.3.5.*

M. Hiç erran nahi duc beraz, ecen ohore hori haren be-

raren dela, eta naturalqui hari berari appertenitzen çayola: baina guri dohainic eta gratiaz communicatzen çaicula, haren membro garen becembatean.

*Rom. 8.28 coloſ. 1. 15.*

H. Hala da eguia. Eta halacotz communicatione hunen reſpectuz bercetan deitzen da anhitz anayeren arteco lehen ſorthua.

*Chriſtē vnctionea*

M. Cer erran nahi du hunen ondoan heldu denac?

H. Declaratzen du nola Iaincoarem Semea Aitáz vnctatu içan den, gure Saluadore licençát, erran nahi baita, gure haragui humanoa harturic, eta gure redemptioneco behar ciraden gauça guciac complituric: hemen erraiten den beçala.

M. Cer aditzē duc hic bi hitz hauçaz, Cōcebitu içā dela Spiritu ſainduaganic, eta Sorthu Maria virginaganic?

H. Ecen hura içan dela formatu Maria virginaren ſabelean, haren ſuſtantia propritic, Dauid-en haci licençat, aitzinetic erran içan cen beçala: baina haur eguin içan dela Spiritu ſainduaren operatione miraculuzcoz, guiçonen compaiñiaric gabe.

*Chriſt egui azco guiçō Mat. 1. 20. eta 16. 13. Luc 1. 27*

M. Neceſſario cena gure haragui propriaz vezti ledin?

H. Bay: ceren behar baitzen Iaincoaren contra guiçonac eguin vkan çuen deſobedientiá, natura humanoan repara ledin. Eta bercela ecin çatequeen gure Ararteco, bere Aitarequin gure iunctatzeco.

*Rom. 5. 19*

*1. Tim. 2. 5 Heb. 4. 14*

M. Hic dioc beraz, ecen behar cela Ieſus Chriſt guiçon eguin ledin, gure perſonán baliz beçala Saluadorearen officioa compli leçançat.

*Falta garenaren complimendua Chriſt baithan eriden behar.*

H Bay, hala da: ecen ceren-ere falta baicara, hura gucia harenganic behar dugu. Eta bercela ecin eguin daite.

M. Baina cergatic hori eguin içan da Spiritu ſainduaz, eta ez guiçonen operationez, naturaren curſuaren araura?

*Chriſt Spiritu ſaindu aganic concebitu.*

H. Ceren haci humanoa bere berez corrumpitua baita, behar cen conceptione hunetan Spiritu ſainduac obra leçan, corruptione orotaric Ieſus Chriſten beguiratzeco, eta ſaindutaſſun oroz complitzeco.

M. Horrá nondic ikaſten dugun, ecen berceac ſanctificatzen dituena, macula orotaric chahu dela: eta bere

amaren ſabelean-danic puritate originalean Iaincoari conſecratu içan cayola macularic batre gabe: leinu humano gucia ſuiet den corruptioneac hura baithan ikuſtecoric batre ezluençat.

H. Horrela aditzen dut nic.

*Miniſtrea.*

NOla da gure Iaun?

H. Nola Aitáz ordenatu içan baita, gu bere gobernamenduan gaituençat, Iaincoaré Reſuma eta Iaurgoá ceruan eta lurrean exerci deçançat: eta Aingueruen eta fidelén Buru dençat.

*8. Igandea Eph. 5.23 coloſſ. 1. 18*

M. Cergatic haren ſortzetic bertan, heriora ethorten aiz haren vicitzearen hiſtoria gucia vtziric?

H. Ceren ezpaita hemen mentioneric eguiten gure redemptionearen ſubſtantia propriaz baicen.

M. Cergatic eztuc ſimplequi erraiten hitz batez, hil içan dela: baina are Pontio Pilatez-ere mentione eguiten duc, ceinen azpian hil içan baita?

H. Hori ezta ſolament hiſtoria eguiazco eta ſegur dela ia quiteagatic, baina daquigunçát, ecen haren herioa condemnationerequin içan delá.

*Chriſt condenatu, gu condemnationetaric idoqui guunçançat.*

M. Declara eçac hori claroquiago.

H. Hil içan da guc iragan behar guenduen pená ſuffri leçançat, eta halatã hartaric deliura guençãçat. Eta gu ceré baiquinaden hoguendũ Iaincoaren iugemendu aitzineã gaizquiguile beçala, gure perſoná repreſenta leçãçát, lurreco iuge baté aitzinean comparitu nahi içan da, eta haren ahoz condemnatu, gu haren amorecatic ceruco iugearen aitzinean abſolua eta hoguen-gabe eſtima guentecençát.

M. Pilatéc bada innocent declaratzen dic, eta eztic gaizquiguile beçala condemnatzen.

*Math. 27. 24. luc. 23. 22. ioan. 19. 4*

H. Bata eta bercea eguia da: ecen innocent eta hoguen gabe declaratzen da iugearen ahoz, aditzera emaiteagatic ecen eztuela bere merecituacgatic ſuffritzen, baina gureacgatic: badaric-ere ſolemnequi condemnatzen da haren beraren ſententiaz, agueri dençat ecen eguiazqui gure fiadore dela, condemnationea guregatic bere gain recebituric, gu hartaric idoqui guen-

*Chriſt guregatic condemnatu*

*Chriſt gure fiadore.*

çançat.

*Christ gure fiadore.* M. Vngui dioc. Ecen baldin bera bekatore baliz ezluquec fiadore abastant, berceren bekatuén pagamendutan suffritzeco. Bada haren condemnationea gure ab- *Esa.53.12.* solutionetan licençát, gaichtoén contuco estimatu behar içan duc.

H. Hala aditzen dut.

*Ministrea.*

*9. Igandea* CEren crucificatu içan den, ekarté du guehiago, ecen ez baldin nehorc berce herioz hil eraci vká balu?

*Gala.3.13.* H. Bay: Apostoluac-ere eracusten duen beçala, dioenean ecen vrkatu içan dela çurean, gure maledictionea bere gain har leçançát, gu hartaric descarga guençançat. Ecen herio mota hura Iaincoaz maradicatua cen.

*Christ maledictionearen suiet eguin gu hartaric deliura guençançat.*

M. Nola, ezta Iesus Iaunaren desohoratzea, erraiten denean ecen maledictionearen suiet içan dela, eta are Iaincoaren aitzinean?

*Deu.21.23*

H. Ez: ecen maledictionea bere gain harturic, deseguin vkan du hura bere verthutez, gu bere benedictioneaz bethe guençançát: baina halacotz eztu benedicatu içatea behinere vtzi vkan.

M. Hots aitzina.

H. Ceren herioa baitzén maledictionebat guiçonaren *Christec herioa suffritu& garaithu.* gainean bekatuaren causaz, Iesus Christec hura iragan eta suffritu vkan du, eta suffrituz hari garaithu içan çayó. Eta eracusteco ecen haren herioa eguiazcoa cela, ohortze nahi içan da berce guiçonac beçala.

M. Baina eztic irudi victoria horretaric deus emendioric ethorten çaicula, ikussiric ecen halacotz gu ezgarela hil gabe azquencen.

H. Horrec eztu deus eguiten: ecen fidelén hiltzea ezta orain, vicitze hobe batetaratco iragaitebat baicen.

*Fidelén hiltzea vicitzerát iragaitebat da.*

M. Beraz eztiagu guehiagoric herioaren beldur içan behar, gauça icigarribat baliz beçala, baina Iesus Christ gure Buru eta Capitain bakoitz gure aitzindari iarri içan çaicunari, gu ez galdu baina saluatu nahi gaituenari gogotic iarreiqui behar guiaizquioc.

H. Hala eguiteco dugu.

*Ministrea.*

IFfernuetara iautſi iç̃a dela erraiten duanean, cer erran nahi da hura?

*10. Igandea*

H. Ecen Ieſus Chriſtec eztuela ſolament ſuffritu vkan herio naturala, cein baita arimaren gorputzetic ſeparatzea, baina are haren arima-ere herſtura handitan içan dela: eta herſtura hec S. Pierriſec herioaren dolore deitzen ditu.

*Chriſten iffernuetaraco iauſtea. Act. 2.24.*

M. Eta cergatic hori eguin içan da, eta cer moldez?

H. Ceren bekatorén icenean pagamenduaren eguitera Iaincoaren aitzinean preſentatzen baitzén, behar cen herſtura handi hura ſendi leçan bere conſcientián Iaincoaz abandonnatua içan baliz beçala: eta are Iaincoa haren contra aſſerre baliz beçala, abyſme hartan cela oihu eguin vkan çuen, Ene Iaincoá, ene Iaincoa, cergatic abandonnatu nauc?

*Mat. 27.46 Marc. 15. 34.*

M. Iaincoa bada aſſerre cena haren contra?

H. Ez baina behar cen hala affligi ledin, Eſaiaſez aitzinetic erran içan cena compli ledinçát, Ecen Iaincoaren eſcuaz io iç̃a dela gure bekatuacgatic, eta gure iniquitateac ekarri vkan dituela.

*Eſa. 53.5. 1. pier. 2.24*

M. Baina bera eguiazco Iainco içan eta, nolatã herſtura hartan ahal çatequen Iaincoaz abandonnatua içan baliz beçala?

H. Aditu behar da ecen bere natura humanoaren araura herſtura eta extremitate hartan içan dela: eta haur eguin ledinçát, haren diuinitatea cegoela dembora appur batetacotz gordea beçala, erran nahi dut, bere indarra eracuſten etzuela.

M. Baina nolatan ahal date, Ieſus Chriſt, cein baita munduaren ſaluamendua, halaco condemnationetan içan ahal den?

H. Ezta hartan içan, haren azpian egoiteco: ecen hala ſenditu vkan ditu erran diraden herſturác, non heçaz ezpaita garaithu içan: baina bataillatu iç̃a da iffernuetaco puiſſançaren contra, hura hauts eta deſeguin leçançát.

M. Horretaric agueri duc, cer differentia den, harc ſuffritu duén tormentaren, eta Iaincoac bere hirán punitzen dituenén tormentaren artean. Ceren hartan,

*Chriſten tormenta eta damnatzẽ diradenena certan differént.*

appurbatetacotz içan dena, bércetan ſeculacotz baita: eta hartan ſendi eraciteco ezten colpebat beçala içan dena bercétan heriotara çaurtzeco ezpatabat beçala baita.

H. Hala da. Ecen ezta içan Ieſus Chriſtec bethiere Iaincoa baithan ſperança vkan eztuen, halaco herſtura handietan-ere: baina damnatzen diraden bekatoreác, deſeſperatzen eta deſpitatzen dirade Iaincoaren contra blaſphemiorequin.

*Miniſtrea.*

ERran diradenetaric eçagut ahal deçaquegu Ieſus Chriſten heriotic cer probetchu dugun?

H. Bay. Eta lehenic badacuſſagu ecen haren herioa ſacrificiobat dela, ceinez contentatu eta pagatu vkan baitu guregatic Iaincoaren iugemendua: eta hala appacegatu vkan du Iaincoaren hirá, eta gu harequin reconciliatu eta baquetu vkan gaitu. Guero badacuſſagu haren odola dela ikutzebat ceinez gure arimác macula orotaric chahutzen eta purgatzen baitirade: finalqui, badacuſſagu ecen haren herioaz gure bekatuac iraungui içan diradela, ſeculan Iaincoaren aitzinera eztatocençat: eta halatán gure contra cen obligationea iraungui içan da.

*11. Igandea Ieſus Chriſten heriotic dugun irabacia, hirur punctutan.*

M. Deus berce probetchuric etzaicu ethorten?

H. Bay. Ecen herio haren verthutez, baldin Chriſten eguiazco membro bagara, gutan gure guiçon çaharra crucificatzen da, eta gure haraguia mortificatzen, guehiagoric guthicia gaichtoec gutan regna ezteçatençát.

M. Dugun orain hurrenengo articulua.

H. Hereneco eguneán reſuſcitatu içan da hiletaric: harçaz eracutſi vkan du bere burua victorioſo herioaren eta bekatuaren contra. Ecen bere reſurrectioneaz iretſi vkan du herioa, çathitu vkan ditu deabruaren eſtecailluac, eta haren puiſſança gucia deſeguin.

*Reſurrectionetic dan probetchua hirur punctutan.*

M. Reſurrectione hori cembat moldez probetchatzen çaicu?

*Rom. 4. 24. 1. Cor. 15. 20.*

H. Hirurez. Lehenic, ceren harçaz complituqui iuſtitiá irabaci içan baitzaicu. Guero ceren harçaz baitugu bahi ſegurbat, ecen gu-ere reſuſcitaturen garela im-

mortalitatè gloriatacora. Finalqui, baldin hartan eguiaz communicatzē badugu oraindanic resuscitatzen gara vicitze berritara, Iaincoa bere vorondatearen araura cerbitza deçaguncát. *Ministrea.*

*Rom. 6.4*

HOts aitzina.

*12. Igandea*

H. Igan içan da cerüetara.

M. Baina hala igan içan da non guehiagoric lurrean ezten?

*Christ ceruetarac igan.*

H. Bay: ecen Aitác manatu cerauçan gucia, eta gure saluatzecotzat behar cen gucia eguin çuenaz gueroz: etzén mengoaric guehiagoric lurrean conuersa leçn.

M. Eta haren ceruetarat igaiteaz cer probetchu dugu

*Assensionetico probetchua bi punctutan.*

H. Handic probetchu doblea dugu. Ecen ceren Iesus Christ ceruan sarthu içan baita gure icenean, guregatic iautsi içā cen beçala, hara sartze eman vkan draucu, eta seguratzen gaitu, ecen lehen gure bekatuagatic ert siric çaicun bortha orain irequiric daicula. Berçalde, Iaincoaren aitzinean guregatic comparitzen da, gure Ararteco eta Aduocat içateco.

*Rom. 8. 33*
*heb. 7. 25*

M. Baina Iesus Christ, cerurat igaiteaz, hala mūdutic retiratu içan da, non guehiagoric gurequin eztén?

H. Ez: ecen bercela erraiten du berac, seguratzen gaituenean ecen gurequin içanen dela munduaren finerano.

*Mat. 28. 20*

M. Eta gorputzeco presentiaz gurequin egoiten da?

H. Ez Ecen berce gauça da haren gorputz goiti cerurát igan içan denáz, eta haren verthute leku orotara hedatzen denaz.

*Luc. 24. 51*
*act. 1. 9*

M. Nola aditzen duc erraiten duanean ecen bere Aitaren escuinean iarria dela.

H. Hitz hauc errā nahi duté, ecē bere Aitac emán draucala ceruco eta lurreco iaurgoá, gauça guciac regi eta goberna ditzançat.

*Mat. 28. 18*

M. Baina cer aditzen duc hic Escuinaz, eta minço aicen iarte horrez?

H. Comparationebat da lurreco princietaric hartua, ceinéc bere loctenent ordenatzen dituztenac iar eraciten baitituzte bere escuinean, hayen icenean goberna deçatençat.

*Escuinean iarri içatea*

Ephe.1.20. philip.2.9.

M. Beraz hic horrez eztuc aditzen S. Paulec erraiten duena baicé, erraité duenéa, ecé Eliçaré buru ordenatu içá dela eta principaltassun gucié garaira altchatu içan dela, eta içan gucié gaineco icébat recebitu vká duela.

H. Hala da.

*Ministrea.*

13.Igandea

GOacén aitzina.

Act.1.11.

H. Handic ethorteco da vicién eta hilén iugeatzera: erran nahi da, ecen behin aguerturen dela cerutic iugeatzera, igaiten ikussi içan den beçala.

Heb.9.27.

M. Iudicioco eguna munduaren finerano ez içanen eta, nola dioc hic ecen batzu vici eta berce ac hil diratela ikussiric ecen guiçon guciey ordenatu içan çayela behin hiltzea?

1.Cor.15.23. 1.thess.4.15

H. Questione horretara S. Paulec ihardesten du, dioenean ecen orduan vici diratenac, bertan muthaturen diratela: hayén corruptionea aboli dadinçát eta hayén gorputzac arramberri ditecençat incorruptible içateco.

M. Hic aditzen duc beraz, muthatze hura hiltzebat beçala hetan içanen dela, ceren hayén lehen naturá abolituren baitate, berce statu batetan resuscita ditecençát.

H. Horrela aditzen dut.

M. Gure cóscientiéc recebitzé dute cósolationeric batre, ceré Iesus Christ múduaré iugeatzera behin ethorteco den?

H. Bay gucizco consolatione handia. Ecen gu segur gara gure saluamendutan baicen eztela aguerturen.

M. Beraz azquen iudicioaren eztiagu beldur içan behar.

Christ gure Iuge eta Aduocat.

H. Ez, gure aduocataz eta gure gauçá defendatzeco hartu duenaz berce iugeren aitzinera behar eztugunaz gueroz.

*Ministrea.*

14.Igandea Hirurgarren partea Spiritu saindua eta haren gratiaz.

GAtocen orain hirurgarren partera.

H. Hura da Spiritu saindua baithan dugun sinhesteaz.

M. Sinheste horrec cer probetchu ekarten draucu?

H. Eçagut deçaguncát ecen nola Iaincoac bere Seme

Iesus Christez redemitu eta saluatu vkan baiquaitu, hala bere Spiritu sainduaz-ere participant eguiten gaituela redemptione eta saluamendu hunetan.

M. Baina cer moldez?

H. Nola Iesus Christen odola baita gure purgationea eta ikutzea, hala Spiritu sainduac odol harçaz behar ditu gure conscientiác ihiztatu, chahu ditecençát. *1.Pier.1. 19. 1.ioan.1.7*

M. Horrec claroquiago declaratu behar liquec.

H. Errã nahi dut, ecen Spiritu sainduac gutã habitatzẽ denean sendi eracitẽ draucula Iesus Christ gure Iaunarẽ verthutea. Ecen Iesus Christec eguin drauzquigun gratiác, Spiritu sainduaren illuminationez aditzen ditugu eta harc gure bihotzetã ciguilatzẽ ditu, eta gu gaitu regeneratzen eta creatura berri eguiten: halaco maneraz non haren moienez recebitzen baititugu Iesus Christ baithan presentatzen çaizquigun on eta gratia guciac. *Rom.5.8 ephe 1.13*

*Ministrea.*

CEr dugu orain guehiagoric?

H. Laurgarren partea, non erraiten baita ecen sinhesten dugula Eliça catholicoa. *15.Igandea Laurgarrẽ partea Eliçaz.*

M. Cer da Eliça catholicoa?

H. Hura da, Iaincoac vicitze eternaleco ordenatu eta elegitu dituen fidelén compainiá. *Eliça cer den.*

M. Necessario da articulu hori sinhets deçagun?

H. Bay, baldin Iesus Christen herioa, eta oraindrano erran den gucia ezdeustu nahi ezpadugu. Ecen gucietaric heldu den probetchua, Eliçá da. *Christẽ heriotic den probetchua.*

M. Hic dioc beraz, ecen oraindrano gure saluamenduaren fundamentaz eta causáz mentione eguin içan dela, Iaincoac Iesus Christen moienez amoriotan recebitu gaituen becembatean, eta confirmatzen duela gratia haur gutan bere Spiritu sainduaz: baina orain gauça hauen complimendua eta effectoa declaratzen dela, segurança handiagoren emaiteagatic.

H. Eguia da.

M. Cergatic deitzen duc Eliçá, Saindu?

H. Ceren Iaincoac elegitu dituenac iustificatzen eta purificatzen baititu saindutassunetara eta innocentiatara, hetan bere gloriá argui eraci deçançát. Eta hunez *Rom.8.29*

*Ephe. 5.26* Paulec auisatzen gaitu dioscunean, ecen Christec redemitu duen Eliçá sanctificatu vkan duela, glorioso eta macula gabe dençat.

M. Cer erran nahi da, Catholicoa, edo vniuersala?

*Catholicoa cer erran nahi. Ephe. 4.15 1. cor. 12.12* H. Hitz haur da guri aditzera emaiteco, ecen nola ezpaita fidelén burubat baicen, hala guciac gorputzbat eguin behar diradela, halaco maneraz non ezpaitirade anhitz Eliça, baina bat, mundu orotara hedatua.

*Fidelén communionea.* M. Eta Sainduén communionea cer erran nahi da?

H. Hori eçarten da Eliçaco membroén artean den vnionearen hobequi declaratzeagatic. Halaber hunez aditzera emaiten çaicu, ecen Iaunac bere Eliçari eguiten drautzan vngui guciac diradela fideletaric batbederaren probetchutan eta saluamendutan, ceren guciec baitute communione elkarrequin. *Ministrea.*

*16. Igandea* BAina hic Eliçari attribuitzen draucoan saindutassun hori perfecto da oraino?

*Eliçá oraino imperfect.* H. Ez, mundu hunetan bataillatzen deno. Ecen bethi dirade imperfectionezco reliquiác, eta etzaizquio seculan edequiren, bere buru Iesus Christequin, ceinec sanctificatzen baitu, perfectoqui iuncta daiteno.

M. Eta Eliça haur ecin bercela eçagut ahal daite sinheftez baicen?

H. Iaincoaren Eliça visiblea-ere bada, eta haren eçagutzeco seignaleac eta mercác baditugu: baina hemen bereciqui eta specialqui minço da Iaincoac saluatzeco elegitu duen compainiáz, cein ecin perfectoqui beguiz ikus ahal baitaite.

M. Cer dugu guehiago?

H. Sinhesten dut bekatuén barkamendua.

M. Cer aditzen duc barkamenduaz?

*Bekatuen barkamenduaz.* H. Ecen Iaincoac bere gratiazco ontassunaz fideley faltác barkatzen eta quitatzen drauztela, haren iudicio aitzineán hec aippa-ere eztaquizquien, punitionetan.

M. Hortic concludi ahal ceçaqueagu ecen eztugula gure satisfactionez merecitzen Iaincoac barka dieçagun.

H. Hala da: ecen pagamendua Iesus Iaunac eguin vkan du, eta pená ekarri vkan du. Guçaz den becemba-

tean recompensaric batre ecin ekar dirogu, baina Iaincoaren gratia eta liberalitate purez, gure falta guciéz barkamendu recebitu behar dugu.
M. Cergatic articulu hori Eliçaren ondoan eçarten duc?
H. Ceren nehorc ezpaitu bekatuen barkamenduric impetratzen, baldin lehen Iaincoaren populuarequin incorpora ezpadadi, eta perseueratzẽ ezpadu vnitatean eta communionean Christen gorputzarequin, eta halatan Eliçaco membro eguiaz co den.
M. Beraz Eliçatic campoan ecin datec damnationeric eta herioric baicen.
H. Segura da hori: ecen fidelén communionetic separatzen diradenéc appart secta daguitençát, eztute saluatu içateco sperançaric vkaiteco, separationetan dirateno.

*Ministrea.*

17. *Igandea*

DAnçugun orain goiticoa.
H. Sinhesten dut haraguiaren resurrectionea, eta vicitze eternala.
M. Articulu haur fedearen confessionean cergatic eçarten da?
H. Eracuts daquiguncat ecen gure felicitatea eztela lurrean consistitzen: eta eçagutze hunez bi probetchu ditugu. Bata, ikas deçagunçat mundu hunetan herri arrotz batetan beçala iragaiten, hemendic ioan beharraz ardura pensatzen dugularic, eta gure affectionea lurreco gaucetan eçarten eztugularic. Bercea, Iaunac Iesus Christez eguin draucun gratiaren fructua eta irabacia bethequi senditzen ezpadugu-ere, ezgaitecen icit ez gogo gaichta, baina beguira gauden patientqui reuelationeco egunerano.

*Resurrectioneaz.*

M. Resurrectione haur nola eguinen da?
H. Lehen hil diratenéc harturẽ dituqueizte harçara bere leheneco gorputz berac, baina berce qualitatetá: erran nahi dut, ecen guehiagoric eztiratela herioren ez corruptioneren suiet içanen, substantia hura bera içanen badere. Eta orduan oraino vici diratenac, resuscitaturen dituque Iaincoac miraculosqui, erran den mu-

1. *Cor.* 15. 53.

thatze laster harçaz.

M. Eta resurrectione haur ezta onén eta gaichtoén commun içanen?

H. Bay, baina conditione diuersetan. Ecen batac resuscitaturen dirate saluamendutara eta alegrançatara: eta berceac damnationetara eta heriotara.

*Mat.25.41*
*ioan.5.29*

M. Cergatic bada mentione eguiten da vicitze eternalaz solament, eta ez iffernuaz?

H. Ceren sommario hunetan ezpaita mentioneric eguiten fidelen conscientién consolationetaco gauçaz baicen, Iaincoac bere cerbitzariey eguiten drauztén onez minço da solament. Eta ezta deus aippa gaichtoéz, ceren hec Iaunaren Resumán ikustecoric ezpaitute.

*Ministrea.*

*18. Igandea*
*Fedea cer.*

CEin fundamenten gainean gure fedea fundatua den daquigunaz gueroz, handic concludi ahal deçaqueagu fedea cer den.

H. Eguia da. Bada, Fedea da Iaincoac guregana duen amorioaren eçagutze segurbat eta fermubat, bera bere Euangelioan daclaratzen çaicunaren araura ecen gure Aita eta Saluadore dela Iesus Christen moienez.

M. Eta fede haur gure buruz ahal duquegu, ala Iaincoaganic recebitzen dugu?

H. Scripturác iracasten gaitu ecen fedea Spiritu sainduaren dohain singularbat dela, eta haur experientiazere badacussagu.

M. Eta nola?

H. Ceren baitacussagu gure adimendua, fedeaz reuelatzen çaicun Iaincoaren sapientia spirituala comprehendi ahal deçaqueen baino flaccuago dela: eta gure bihotzac diffidentiatara, edo gure buruëtaratco edo creaturetaratco confidança gaichtotara emanac diradela. Baina Spiritu sainduac illuminatzen gaitu, neholetan-ere bercela ecin adi guenetzaqueen gaucén aditzera: eta fortificatzen gaitu segurançatara, saluamendutaco promessac gure bihotzetan imprimituz eta ciguilatuz.

*Spiritu sainduac illuminatzẽ gaitu.*

M. Fede hunetaric cer on ethorten çaicu, hura dugunean?

H Harc

H. Harc iustificatzen gaitu Iaincoaren aitzinean vicitze eternala duguņçat.

*Fedez iustificatzen.*

M. Nola bada? ezta guiçona obra onéz iustificatzen, sainduqui eta Iaincoaren araura vicitzen dela?

H. Baldin norbeit erideiten baliz hain perfectoric, eguiaz iusto estima ahal leite: baina ceren guciac bekatore gaichoac baicara, gure dignitatea bercetan bilhatu behar dugu, Iaincoaré iugeméduari ihardestecotz.

*Ministrea.*

*19. Igandea*

BAina gure obra guciac hain valio gutitaco dira, non Iaincoaren aitzinean gratiaric ecin mereci deçaten?

H. Lehenic gure natura eta ethorte propriz eguiten ditugun obra guciac, dirade vicioso, eta halacotz ecin dirate Iaincoaren gogaraco, baina aitzitic guciac ditu condemnatzen.

*Regenerationearen aitzinetico obrac gaichto.*

*Matt. 7. 18*

M. Hic dioc beraz Iaincoac bere gratián recebi gaitzaqueen baino lehen bekaturic baicen ecin diadigula, arbore gaichto batec fructu gaichtoric baicen ecin daidian beçala.

H. Hala da eguiá. Ecen gure obréc cãpotic apparentia ederra badute-ere, gaichto baicen ecin dirate, bihotza gaichto denaz gueroz, ceinetara beha baitago Iaincoa.

M. Hortic cõcluditzen duc hic, ecen gure merituz ecin goga deçaquegula Iaincoa guri vngui eguitera: baina gueurón contra tharritatzen baicen eztugula.

H. Horrela aditzen dut. Eta halacotz diot, ecen Iaincoac bere misericordia eta ontassun hutsaz, gure obrén considerationeric batre gabe, bere gratiaz recebitzen gaituela IesusChrist Iaunean, haren iustitiá imputatzen draucularic gure baliz beçala, eta gure bekatuac imputatzen eztrauzquigularic.

M. Nola dioc beraz, guiçona fedez iustificatzen dela?

H. Ceren sinhetsiz eta bihotzeco eguiazco confidançaz Euangelioco promessac recebituz, sartzen baicara iustitia hunetaco possessionean.

M. Hic dioc ecen Iaincoac nola iustitia haur Euangelioan presentatzen baitraucu, hala haren recebitzeco moiena-ere fedeaz dela.

H. Hori eta bera.

*Ministrea.*

*20. Igãdea* BAina Iaincoac behin recebitu gaituenaz gueroz, haren beraren gratiaz eguiten ditugun obrác etzaizquio placent?

*Federequin eguiten diraden obrác.* H. Bay placét çaizquio, liberalqui bere ontassunagatic recebitzẽ ditué becẽbateã, eta ez hayén dignitateagatic

M. Eta nola? eztirade digne recebi ditzan, Spiritu sainduaganic proceditzen diradenaz gueroz?

H. Ez, ceren bethiere gure haraguiarenic cerbait imperfectione hequin nahasteca baita, eta harçaz maculatuac baitirade.

M. Nolatan bada, ezpa cer moienez Iaincoaren gogaraco ahal dirate?

*Iaincoaren gogaraco obren eguiteco moiena* H. Baldin fedez eguinac badirade, erran nahi dut, personá den segur bere cõscientián, ecen Iaincoac eztituela bere seueritatean examinaturen, baina hayen imperfectionea eta maculác Iesus Christen puritateaz estaliren dituela, eta haren amorecatic perfect balirade beçala estimaturén dituela.

M. Baina halacotz erranen dugu ecé Christinoa, Iaincoac bere eçagutzera deithu duẽ ondoan, bere obréz iustificatzen dela, edo hecgatic mereci duela Iaincoac onhets deçan vicitze eternala demonçát?

*Psal. 143. 2* H. Ez, baina aitzitic contrariora, ecen scribatua da vici denic eztela iustificaturen nehor-ere Iaincoaren aitzinean. Halacotz othoitz eguiteco draucagu, eztadin gurequin iugemendutan sar, ez contutara ethor.

M. Baina halacotz hic eztuc aditzen ecen fidelén obra onac alfer diradela.

H. Ez, ecen Iaincoac promettatzen du recompensaturen dituela, bay mundu hunetan bay bercean, largoqui: baina hura gucia eguiten du, ceren bere gratiagatic eta mertchedeagatic on baitarizcu, eta estaltzen eta ohortziten baititu gure bekatuac, heçaz memorioric-ere ez eguitecotán.

M. baina sinhets ahal deçaquegu iustifica gaitecençát, obra onic eguiten eztugula?

*Eguiazco fedea iagoitic ez alfer egon.* H. Hori impossible da. Ecen Iesus Christ baithan sinhestea da, haren halaco recebitzea nolaco presentatzen

baitzaicu. Eta harc promettatzen draucu ez solament heriotic deliuraturen gaituela, eta bere Aitaren gratián eçarriren gaituela bere innocentiaren merituz: baina bere Spiritu sainduaz regeneraturen-ere bagaituela, sainduqui vici eraci gaitzançát

*Iesus Christ baithan sinhestea cer.*

M. Beraz hambat falta duc, fedeac notchalencen gaituen non hura bera baita obra on gucién erroa eta fundamenta.

H. Hala da eguia. Eta halacotz Euangelioco doctrina gucia comprehenditzen da bi punctu hautan: Fedean eta Penitentián, *Ministrea.*

*Fedea eta penitentiá.*

CEr da Penitentiá?

*21. Igandea*

H. Penitentiá da, gaizquiaz desplacer vkaitea eta vnguiaren onhestea Iaincoaren beldurretic proceditzen dela eta guri gure haraguia mortifica eraciten draucula, Iaincoaren cerbitzuan Spiritu sainduaz guida eta goberna gaitecençát.

*Penitentia cer.*

M. Hori duc Iaincoaren cerbitzuaz minço guinenean eguin içan cen diuisionearen bigarren punctua.

H. Bay: eta erran dugu ecen Iaincoaren cerbitzatzeco forma eguiazcoa eta legitimoa dela, haren vorondatea obedi deçagun.

*Iaincoaren cerbitzu eguiazcoa.*

M. Eta cergatic?

H. Ceren ezpaitu nahi gure fantasiaren araura cerbitza deçagun, baina bere vorondatearen araura.

M. Baina gure vicitzeco eta gobernatzeco cer regla eman vkan draucu?

H. Bere Leguea.

*Leguea*

M. Eta harc cer contenitzen du?

H. Bi aldetara partitua da: batac ditu laur manamendu eta berceac sey: eta guciac hamar dirade.

*Leguea bi parte.*

M. Eta diuisione hori norc eguin du?

H. Iaincoac berac, ecen harc Moysesi eman vkan ceraucan bi taulatan scribatua, eta erran, ecen hura hamar hitzetan contenitzen licela.

*Exo. 34. 1 deut. 4. 13 eta 10. 1, 4*

M. Cein da lehen taularen argumentua?

H. Iaincoa nola ohoratu behar dugun.

*Lehen Taulán cer.*

M. Eta bigarren taularena?

H. Gure hurcoequin nola vici behar dugun, eta cer

22. *Igādea* hæy çor drauegun. *Miniſtrea.*

1. *Manamendua.* ERrac lehen manamendua.

*Exo.20.2 deut.5.6* Behadi Iſrael, Ni nauc hire Iainco Iauna, hi Egypteco lurretic, ſclabotaſſuneco etchetic idoqui audana. Eztuc niçaz berce Iaincoric vkanen ene aitzinean.

M. Declara eçac orain hori nola aditzeco den.

H. Hatſean prefaciobat beçala eguiten du Legue guciaren gainean. Ecen bere burua Eternal eta munduaren Creaçale deitzen duenean, manatzeco duen authoritatea eracuſten du. Guero, haren doctrinán goço eriden deçagunçát, erraiten du gure Iainco dela. Ecen gure Iainco eta Saluadore denaz gueroz, raçoin da gu-ere haren populu eguiazco eta obedient eracuts gaitecen.

M. Baina Egypteco lurretic idoquiteaz minço denean etzayo ſpecialqui Iſraeleco populuari minço?

*Egyptetico deliurançá.* H. Bay, gorputzaren arauez den becembatean: baina bekatuaren captiuitate ſpiritualetic eta deabruaren tyraniatic idoqui gaituen becembatean, guri gucioy-ere generalqui appertenitzen çaicu.

M. Eta bere Leguearen hatſean cergatic gauça horrez mentione eguiten du?

H. Cein itzaradoqui eta obligatu garen haren vorondate onari iarreiquitera, eta bercela baigunegui cein ingrat guinatequeen aditzera digunçát.

M. Eta lehen manamendu hunetan cer aditzen du ſommarioqui?

*Lehen manamenduaren ſommarioa.* H. Hari berari appertenitzen çayón ohorea, hari berari reſerua eta renda dieçogun, bercetarat aldaratu gabe.

M. Eta cein da hari berari appertenitzé çayón ohorea?

H. Haren beraren adoratzea, inuocatzea, gure confidança guciaren hura baithan eçartea, eta halaco berce gauça haren Maieſtate ſainduari berari appertenitzen çaizcanac

M. Cergatic erraiten du, Ene aitzinean?

*Iaincoari dagocan obore eguiazcoa.* H. Ceren harc gucia ikuſten baitu, eta hura baita guiçonén barneco penſamendu ſecretuen-ere iuge: aditzera emaiten eta declaratzen draucu, ecen eztuela nahi campotico confeſſionez hura Iainco eduqui deça-

gun ſolament, baina bihotz barneco affectione eguiazcoz-ere bay.

*Miniſtrea.*

ERrac orain bigarren manamendua.

H. Eztraucaç eurorri eguinen imagina ebaquiric, ez eceinere figuraric, ceruã garayan diraden gaucenic, edo beherean lurreã, edo vretan lupeã diradenenic. Eztituc hec adoraturen ez ohoraturen.

*23. Igandea 2. Manamendua.*

M. Defendatzen du choil imaginaric batre eguin eztadin?

H. Ez: baina defendatzen du imaginaric eguin eztadin Iaincoaren figuratzeco, edo adoratzeco.

*Imaginez etabayẽ adorationeaz.*

M. Cergatic ezta ſori Iaincoaren repreſentatzea viſiblequi?

H. Ceren ezpaita conformitateric batre Iaincoaren eta imaginaren artean: ecen Iaincoa Spiritu eternal, da eta incomprehenſible, eta imaginá, material, corporal, corruptible eta viſible.

*Eſa. 40. 18 act. 17. 29. Rom. 1. 23*

M. Hic aditzen duc beraz, haren Maieſtateari deſohore eguitea dela, haren molde hartan imaginaz repreſentatzea.

H. Eguia da.

M. Cer adoratione mota hemen condemnatzen da?

H. Norbeit imagina edo figura baten aitzinean preſentatzen denean haren aitzinean othoitz eguitera, belhauricatzera edo gurtzera, edo cerbeit haren ohoretaco ſeynaleren eguitera, Iaincoa han eracuſten balitzaicu beçala.

M. Eztiagu beraz aditu behar ecen imagina ebaquite, edo pintatze gucia generalqui defendatzen dela: baina ſolament Iaincoaren cerbitzatzeco edo gauça viſibletan haren ohoratzeco, edo nola nahi den idolatriatan vſatzeco eguiten den imagina gucia.

*Cer pintadura mota defendatzen den.*

H. Hala da.

M. Cer finetara harturen dugu manamendu haur.

H. Nola lehen manamenduan declaratzen baitu Iaincoac ecen bera dela berceric gabe adoratu behar dena: halaber orain eracuſtẽ draucu cein den eguiazqui adoratzeco formá, ſuperſtitione eta manera carnal gu-

cietaric retira gaitecençát.

*Ministrea.*

*24. Igãdea* GOacen aitzina.

H. Guero mehatchubat eçarten du dioela, Ecen ni nauc hire Iainco Iauna, Iainco borthitza, ielossia, aitẽ iniquitatea haourrén gainean visitatzen dudana, hirurgarren eta laurgarren generationerano niri gaitz dariztenetan.

M. Cergatic eguiten du mentione bere indarraz?

H. Aditzera emã deçançat ecen bere gloriaren maintenitzeco asco bothereusu dela.

M. Ielossiazco hitzaz cer erran nahi du?

H. Bere quideric edo lagunic ecin suffri deçaqueela. Ecen nola bere ontassun handiagatic bera guri eman içan baitzaicu, hala nahi du gu-ere ossoqui haren garén. Eta haur da gure arimén castetatea, hari consecratu eta dedicatu içatea. Berçalde, paillardiça spiritualbat da harenganic edocein superstitionetara aldaratzea.

*Paillardiça spirituala.*

M. Nola aditzeco da ecen aitén iniquitatea haourrén gainean punitzen duela?

H. Hobequi beldur eraciteagatic, erraiten du, ecen eztela hura offensatzen dutenez mendecaturen solament, baina hayẽ arraça-ere maradicaturẽ duela hayẽ ondoã.

*Nola Iaincoac aitén bekatuac haourretan punitzen.*

M. Eta hori ezta Iaincoaren iustitiaren contra, batac berceacgatic punitzen dituenean?

H. Baldin leinu humanoaren conditionea considera badeçagu, questione hori hustu date. Ecen naturaz guciac gara maradicatuac, eta ecin Iaincoaz arrangura ahal gaitezque, garen beçala vtziten gaituenean. Eta nola bere gratiá eta amorioa eracusten baitu bere cerbitzarién gainean, hayén haourrac benedicatzen dituenean. Halaber haren hiraren eta mendequioaren seignalebat da gaichtoén gainean, hayén hacia maledictionetan vziten duenean.

M. Cer dio guehiago?

H. Emetassunez-ere incita gaitzançat, continuatzen du bere proposa eta dio. Ni nauc misericordia eguiten drauedana milla generationetarano niri on dariztenеy, eta ene manamenduac beguiratzen dituzteney.

M. Aditzen du ecen fidelaren obedientiác saluaturen duela haren arraça gucia, baldin gaichto bada-ere?

H. Ez: baina hambatetarano bere fideletara hedaturen duela bere ontassuna, non hayén amorecatic, hayén haourrey-ere bere burua eçagut eraciren baitraue: eta ez solament haraguiaren arauez prospera eraciren dituela: baina bere Spirituaz sanctificaturen-ere badituela, haren vorondatearen eguitera obedient diraten beçala.

*Misericordia milla generationetarano.*

M. Baina eztuc hori perpetual.

H. Eguia da. Ecen nola Iaunac reseruatzẽ baitu gaichtoen hourrey misericordiá eguiteco libertatea hala fidelén haourretan-ere badaduca placer dituenén elegitzeco edo iraizteco botherea. Badaric-ere hala guciey thornu emaiten draue, non nehorc eçagut ahal baiteçaque, ecen promes haur eztela vano ez enganiotaco.

M. Cergatic hemen eguitén du mentione milla generationez, eta mehatchuan ez hirurez edo laurez baicen?

H. Hori eguiten du aditzera emaiteagatic, ecen vnguiz-ere emetassunez eta misericordiaz vsatzera prestago dela ecen ez seueritatez edo gogortassunez: berac-ere testificatzen duen beçala, ecen vngui eguitera gogabera dela, eta asserretzera berantcor.

*Exo. 34. 6 psal. 103. 8*

*Ministrea.*

GAtocen orain hirurgarren manamendura.

*25. Igãdea 3. Manamendua.*

H. Eztuc eure Iainco Iaunaren icena vanoqui harturen.

M. Cer erran nahi du horrez?

H. Defendatzen draucu, ezteçagun Iaincoaren icenaz abusa, ez solament desperiuruz, baina ezeta cin arinetan eta alferretan-ere.

M. Eta, bada legitimoqui Iaincoaren icenaz iuratzeco moyenic?

H. Bay, iuramendu necessarioetan: hala nola eguiaren sustengatzeagatic, beharra denean, eta charitatearen eta eguiazco baquearen gure artean enteteni-

tzeagatic.

M. Iaincoaren desohoretan egui ten diraden iuramenduac corregitu baicen eztu deus berceric nahi?

H. Batez erraiten draucunean, guciéz iracasten gaitu generalqui, ezteçagun Iaincoaren icena iagoitic aippaere beldurequin eta humilitaterequin baicen, glorifica deçagunçat. Ecen nola saindu baita eta digné, gucere haren icena hala aippatu behar dugu, non irudiere eztaquión nehori ecen menospreciatzen dugula edo haren ansiaric eztugula.

*Iaincoaren icenaz.*

M. Nolatan hori eguin ahal deçaquegu?

H. Baldin Iaincoaz, ez haren obréz, pensa ezpadeçagu, edo minça ezpagaitez haren ohoretan eta laudoriotan baicen.

M. Hunen gainean cer dugu guehiagoric?

H. Mehatchubat eçarten du, ecen Iaunac eztuela innocentetan eta hoguen-gabetan eduquiren haren icena vanoqui harturen duena.

M. Bercetan declaratzen duenaren gainean generalqui ecen Leguea hautsiren duten guciac punituren dituela, cer da hemen guehiago?

H. Mehatchu huneçaz declaratu nahi vkan du cembat estimatzen duen bere icenaren gloriá, erraiten duenean, ecen eztuela suffrituren nehorc hura menosprecia deçan, eta menospreciaçaleac punituren dituela, eta haur eguiten du hura reuerentiatanago eduqui deçagunçat.

*Ministrea.*

*26. Igandea 4. Manamendua.*

DVgun orain laurgarren manamendua.

H. Aicén orhoit Sabbath egunaz, hura sanctifica deçançat. Sey egunez trabaillaturen aiz, eta eguinen duc eure obra gucia. Baina çazpigarrena, hire Iainco Iaunaren Sabbathoa duc. Eztuc eguinen hartan obraric batre, ez hic, ez hire semec, ez hire alabac, ez hire muthillec, ez hire nescatoc, ez hire idic, ez hire astoc, ez hire borthez barnetic habitatzē dē estrangerec. Ecen sey egunez eguin citic Iaincoac cerua eta lurra eta cerere hetan contenitzen baita: çazpigarrenean reposatu içan duc. Harren benedicatu vkan dic Sabbath egu-

na eta sanctificatu.

M. Manatzen gaitu sey egunez trabailla gaitecen, çazpigarrenean reposa gaitecençát?

H. Ez simplequi:baina sey egunez trabaillatzeco congit emaiten duenean, çazpigarrena reseruatzen du eta reposatzeco destinatzen.

M. Defendatzen draucu bada languite gucia asteco egunetaric batetan?

H. Manamendu hunec badu cerbait consideratione bereciric: ecen Sabbathoaren obseruationea Legueco ceremonia ancianoén partebat da:eta Iesus Christen ethorteaz abolitu içan da.

M. Errã nahi duc ecẽ manamẽdu haur Iuduéy apperte nitzen çay ela, eta Testamentu çaharreco demboraçotzat emana dela?

H. Bay ceremonial den becembatean.

M. Eta nola,badu deus ceremonial eztenic?

H. Hirur gauçagatic eguin içan da.

*Hirur raçoinagatic Sabbath eguna ordenatu.*

M. Cein dirade hec?

H. Repos spiritualaren figuratzeco:Eliçaco politiaren entretenitzeco:eta cerbitzarién solageatzeco.

M. Eta cer aditzen duc repos spiritualaz?

H. Gure obra proprietaric cessatzea, Iaunac gutan obra deçançat.

M. Nolatan hori eguiten da?

H. Gure haraguia mortificatuz, erran nahi dut, gure naturáz renuntiatuz, Iaincoac bere Spirituaz goberna gaitzançát.

M. Eta hori astean egun batez baicẽ ezta eguin behar?

H. Ardura eguin behar da. Ecen hatsen garenetic finerano continuatu behar dugu gure mende gucian.

M. Cergatic bada egun iaquin-bat horren figuratzeco assignatzen da?

H. Ezta necessario figuratzen duena gauça gucietan eguiarequin bardin dadin, baina asco da cerbait gauçatan elkar aithor eta irudi dutén.

M. Cergatic çazpigarrena hartacotzat lehen ordenatzen da ecen ez cembeit berce egunic?

H. Ceren çazpitaco contuac perfectione significatzen

*Caz vitaco contua.* baitu Scripturán : eta halacotz da hura carazco perpetuitatearen denotatzeco. Halaber auisatzen gaitu, ecen gure repos spirituala eztela hatsen baicé mundu hunetan gareno, eta eztela complituren mundu hunetaric ilki gaitezqueno.

*27. Igãdea* *Ministrea.*

B Baina gure Iaunac hemé allegatzé duen raçoina cer erran nahi da, Ecen reposatu behar dugula, hura reposatu içan den beçala.

H. Sey egunez bere obra guciac creatu cituen ondoan bere obrén consideratzeco bereci vkan du çazpigarrena eta hartara incitago gaitzançat, bere exemplua allegatzen draucu. Ecé ezta deus hain desiratzecoric, nola haren irudira conforme içatea.

M. Egun oroz Iaincoaren obrác meditatu behar dirade, ala astean egun batez asco da?

H. Hori egun oroz eguin behar dena da: baina gure infirmitateagatic egun iaquin-bat da hartacotzat specialqui berecia Eta haur da nic erran dudan politiá.

*Iaincoaren obrén meditationea.*

M. Eta egun hartan cer politia nehorc eduqui behar du?

*Egunezco politiá.*

H. Orduan behar da populua bil dadin Iaincoaren eguián instruitu içatera, othoitza cómunén eguitera, eta cein bere fedeaz eta religioneaz testificatzera.

M. Nola aditzen duc, Iaunac manamendu haur cerbitzarién solageamenduagatic-ere eman duela?

H. Berceren suiectioneco diradeney cerbait paussu eman daquiençat. Eta haur politia communaren eduquiteco-er e on da. Ecen egun-bat paussatzecoassignaturic denean, goitico demborán çostumatzen da batbedera trabailluan.

M. Orain dançugun nola manamendu haur guri appertenitzen çaicun.

*Coloss. 2. 17* H. Ceremoniáz den becembatean, hura abolitu eta iragan da. Ecen complimendua Iesus Christ baithan dugu.

M. Cer moldez?

*Rom. 8. 11* H. Ceren haren herioaren verthutez crucificatzen baita gure guiçon çaharra, eta ceren haren resurrectioneaz resuscitatzen baicara vicitze berritara.

M. Cer da bada manamédu hunetaric gueldítzẽ çaicuna?
H. Iaincoaren hitzaren ençuteco, othoitza publicoén eguiteco eta Sacramenduén administratzeco Eliçan or denatua den politiá beguira deçagun, eta fidelén artean den politia spirituala hauts ezteçagun.
M Eta figuratzen çuen becembatean etzaicu deus probetchatzen?
H. Bay: ecen bere eguiari applicatu behar çayó. Eta hura date, baldin Christen membro eguinic, eta gutaric diraden obrác vtziric, Iaincoari gure buruac gobernatzera vtzi badietzacogu.

*Ministrea.*

GAtocen bigarren Taulara.
H. Haren hatsea da, Ohoraitzac eure aita eta ama

*28. Igãdea 5. Manamendua.*

M. Cer aditzen duc hic ohoratzeaz?
H Haourrac diraden humil eta obediént bere aita-ametara, hæy ohore eta reuerentia ekarten drauelaric, aiutatzen dituztelaric, eta hayén manuco diradelaric itzera doqui diraden beçala.

*Aita-amẽ ohoratzea nola.*

M. Hots aitzina.
H. Guero manamendu huni Iaincoac eratchequiten drauca promesbat, dioela, Hire egunac luça ditecençát, eure Iainco Iaunac emaitẽ drauán lurraren gaineã.
M. Cer erran nahi da hori?
H. Ecen vicitze luce Iaincoac emanen drauela aita-amác bide beçala ohoratzen dituzteney.
M. Vicitze haur bambat miseriaz bethea denaren gainean: nola Iaincoac gratia specialez guiçonari promettatzen drauça ecen luçaqui vici eraciren duela?
H. Mundu hunetaco vicitzea hambat miseriatara suiet badere, fidelarentzat Iaincoaren benedictionebat da: eta berçeric ezpaliz-ere, ceren Iaincoac hec hemen entretenituz, bere amorio paternala eracusten baitraue.

*Vicitze lucea.*

M. Eta berce aldera, erranẽ dugu ecen gazteric hiltzen dena, Iaincoaz maradicatua dela?
H. Ez: baina aitzitic guerthaturen da batzutan, Iaincoac maitén dituenac, sarrienic mundu hunetaric retiraturen baitituque.
M. Eta hori eguiten duenean, nola bere promessa be-

guiratzen du?

*Műduco onac conditionerequin*

H. Iaincoac mundu hunetan promettatzen drauzquigun on guciac, conditionerequin recebitu behar ditugu gure ariméc on eta behar duten becẽbatean. Ecen gauça guribat liçate baldin haur bethiere aitzinean ioaiten ezpaliz.

M. Eta cer içanen da aita-ametara deſobedient içanen diradenez?

*Haour deſobedientén punitionea*

H. Hec eztitu Iaincoac ſolament azquen iudicioan puniruren: baina hemen-ere mendecaturen da hayen gorputzetan, edo dela goiz hil eraciz, edo miſerablequi vicitzera vtziz, edo cerbait berce moldez.

M. Promes hunetan, ezta Chanango lurraz ſpecialqui minço?

H. Bay, Iſraeleco haourréz den becembatean: baina orain hitz haur generalquiago hartu behar da. Ecẽ ceinere lekutan egoiten baicara, lurra harena denaz gueroz, gure babitationea-ere harc emaiten draucu.

*Pſal. 24.1.*

M. Manu horretaric bada deus guehiago?

H. Aita-amez baicen, ez minço içanagatic aditu behar dirade ſuperior guciac, raçoin-bat bera denaz gueroz.

M. Eta cer raçoin?

H. Ceren Iaincoac guehientaſſuna emã vkan baitraue. Ecen ezta aita-amen, ez princién, ez goitico ſuperiorén authoritateric batre, Iaincoaren ordenançaz baicen.

*Miniſtrea.*

*29. Igãdea. 6. Manamendua.*

ERrac ſeigarren manamendua.

H. Eztuc hilen.

M. Hiltzale içatea baicen eztu defendatzen?

H. Bay. Ecen Iaincoa bera minço denaz gueroz, eztraucu legue eçarten campotico obrén gaineã ſolamẽt, baina principalqui gure bihotzetaco affectionén gaineã

M. Hic aditzen duc beraz, badela hiltze mota barnezcobat, Iaincoac manamendu hunetan defendatzen duenic.

H. Hala da. Ecen gaitzeriztea eta vorondate gaitza, bay eta nehori gaizqui eguiteco guthicia gucia, nehoren hiltze eſtimatzen da Iaincoaren aitzinean.

M. Eta aſco da nehori gaitzerizteric edo affectione

gaichtoric ez ekartea?

H. Ez: ecen Iaincoac gaitzeriztea condemnatzen duenean, aditzera emaiten draucu, manatzen gaituela elkar onhets deçagun, affectione onez eta hypocrisia gabe, batac bercearen ona procura deçagun.

M. Errac çazpigarren manamendua.

*7. Manamendua.*

H. Eztuc paillardaturen

M. Declara eçac cer den horretaco sommarioa.

H. Paillardiça gucia dela gauça maradicatua Iaincoaren aitzinean. Eta halacotz, baldin haren hirá gure gainera erekarri nahi ezpadugu, hartaric beguiratu behar garela.

*Paillardiça gucia maradicatu.*

M. Eta manamendu hori ezta aitzinago hedatzen?

H. Bethiere consideratu behar dugu Leguea eçarten duenaren naturá, ecen hura, eztago behá campoco obretara solament, baina bihotzeco affectionaren esquez dago.

*Legue eçarlearen natura.*

M. Cer dacarque bada guehiago?

H. Gure gorputzac eta arimác Spiritu sainduaren temple diradenaz gueroz, bata eta bercea chahu eta pur beguira ditzagun: eta garen caste, ez eguinez solament, baina desirez, hitzez, eta gestuz: hala non, paillardiçari dagocan maneraz gutan deus maculaturic eztén.

*1. Cor. 3. 16 2. cor. 6. 16.*

*Ministrea.*

GAtocen çortzigarrenera.

*30. Igãdea 8. Manamendua. Ohorgoaz.*

H. Eztuc ebatsiren.

M. Manamendu horrec iustitiaz punitzen diraden ohoinqueriac defendatzen ditu, ala aitzinago hedatzé da?

H. Berceren onaren gureganatzeco moien gaichto gucia defendatzen draucu: edo dela bortchaz, edo enganioz, edo Iaincoari placent etzayón berce moldez.

M. Asco da eguinetic beguiratzea, ala vorondatea hemen-ere aditzen da?

H. Bethiere hunetara ethorri behar da, ceren leguea eçarten duena spiritual baita, ecen eztela simplequi ohoinqueria exterioraz minço solament, baina berceren damutan onhassun vkaiteco entrepresa, deliberatione, vorondate eta enseyu guciaz.

*Barneco ohorgoaz.*

M. Cer bada eguiteco da manamendu hunen beguira-

tzecotz?

H. Gure eguimbidea eguin behar dugu eta procuratu nori berea beguira daquión.

*9. Manamendua.*

M. Cein da bedratzigarren manamendua?

H. Eure hurcoaren contra testimoniage falsuric eztuc erranen.

*Doctrina generala iuramēduaz.*

M. Defendatzen draucu iudiciotan ez desperiuru içatea, ala neholere hurcoaren cõtra gueçurric ez erraitea?

H. Mota batez minço da, baina harçaz doctrina generalbat emaiten draucu, eta hura da, Ezteçagun falsuqui gure hurcoa gaitzerrã, eta eztaquión gure gaitz erraiteaz bere onetan ez bere famán calteric ethor.

M. Cergatic bereciqui desperiuru publicoéz minço da?

H. Guc, gaitzerraiteco eta diffamatzeco vitio haur hastio handitanago dugunçát, aditzera emaiten draucularic ecen nor-ere bere hurcoaren falsuqui calumniatzen, edo diffamatzen costumatzen baita, errachqui iudiciotan desperiuratzera-ere ethorriren dela.

M. Defendatzen du nehoren cõtra gaizqui minçatzea, ala gaizqui pensatzea-ere bay?

H. Bay bata bay bereea, lehen erran diraden raçoinén araura. Ecen guiçonén aitzinean eguitea gaizqui dena, pensatzea-ere gaizqui da Iaincoaren aitzinean.

M. Dançugun bada sommarioqui horrec cer erran nahi duen.

H. Iracasten gaitu ezgarén gaizqui iugeatzera eta diffamatzera emanac, baina eguiác emaiten duen lekurano estimatione on gure hurcoaz vkaiten, eta gure hitzetan eta maneretan haren fama onaren beguiratzen enseya gaitecen.

*Ministrea.*

*31. Igãdea. 10. Manamendua.*

GAtocen orain azquen manamendura.

H. Eztuc guthiciaturen eure hurcoaren etchea: eztuc guthiciaturen eure hurcoaren emaztea, ez muthilla, ez nescatoa, ez idia, ez astoa, ez haren den gauçaric batre.

M. Legue gucia spiritual denaz gueroz, hic hambatetan erran duán beçala, eta berce manamenduac ez obra exteriorén solament, baina barneco affectionen-ere reglatzeco diradenaz gueroz, cer guehiago hemen er

raiten da?

H. Berce manamenduetan Iaunac nahi vkan ditu gure affectioneac eta vorondateac reglatu eta dreçatu:hemen, legue eman nahi vkan draue gure pensamenduey, ceren hec berequin baituté cerbait guthicia eta desir,vorondate paussatze batetara heltzen ezpadirade-ere.

M. Aditzen duc hic bekatu dela, persona fidelari gogora ethor ahal lequidion tentationeric chipiena-ere, hartan gogoric eçar ezpadeça eta resisti badieço, eta batre consenti ezpadeça-ere?

H. Gauça segura da ecen pensamendu gaichto guciac, gure haraguiaren infirmitatetic heldu diradela,consentimenduric eçar ezpadeçagu-ere: baina nic erraiten dudana da, ecen manamendu haur minço dela, gogoric eguin gabe-ere nehoren bihotza quilicatzen eta incitatzen duten guthiciéz, arrest eguitera ethorten ezpadirade-ere.

*Tentatione oro vitio.*

M. Hic dioc beraz, ecen nola gogoan consentimendurequin arrestatzen eta deliberatzen diraden affectione gaichtoac oraindrano hunqui eta condemnatu içan baitirade, hala manamendu hunetan-ere Iaunac halaco perfectionebat gureganic nahi duela bayeta galdeguiten, non gure bihotzetan sar-ere eztadin, gaizquira incita deçaqueen guthiciaric batre.

H. Eguia da.

M. Legue guciaren sommariobat eguin ahal guineçaque orain?

H. Bay, aisitqui-ere,bi articulutara hura itzuliz:eta lehena da, Onhets deçagun Iaincoa, gure bihotz guciaz eta gure arima guciaz eta gure ahal guciéz. Bercea da, Onhets deçagun gure hurcoa, gure buruac beçala.

*Leguearen sommarioa*

M. Nola da Iaincoaren eguiazqui onhestea?

H. Baldin hura onhets badeçagu Iainco beçala, erran nahi dut, baldin hura Iaunetan, Iabetan, Saluadoretan eta Aitatan eçagut eta eduqui badeçagu: eta onheste hunequin behar dirade beldurra, ohorea, confidança eta obedientiá.

M. Cer erran nahi da gure bihotz guciaz, gure arima guciaz eta gure ahal guciez?

*Bihotz gu-ciaz Iaincoaren onhe-stea.*

H. Erran nahi da, Onhets deçagun Iaincoa halaco zelo eta affectione batez, eta halaco gorthaffun batez, non gutan eztén eceinere desiric, eceinere vorondateric, eceinere ens...uric, ez pensamenduric onherizte hunen contretacoric.

*32. Igãdea.*

ETa bigarren articulua cer erran nahi da?

H. Hala nola hambat emanac baicara gure buruén onhestera, non affectione hunec goitico guciac iragaité baititu, halaber gure hurcoaganatco charitateac-ere hala leku duen gure bihotzetan, non harc guida eta goberna baiquaitzaque, eta gure pensamenduén eta obrén regla baitate.

M. Nor aditzen duc hic gure hurcoaz?

*Gure hurco nor.*

H. Ez solament gure ahaideac eta adisquideac, edo gurequin familiaritate dutenac, baina eçagutzen-ere ez-titugunac eta gure etsayac-ere.

M. Eta hec cer coniunctione duté gurequin?

H. Iaincoac gucién artean eçarri duen coniunctioneaz lothuac dirade gurequin: eta hura da halaco non nehoren malitiaz ecin aboli ez hauts baitaite.

M. Hic errã nahi duc beraz ecen baldin norbeitec gaitz badarizcu, hura haren propritic dela, baina halacotz, Iaincoaren ordenançaren arauez, bethi gure hurco dela, eta halacotan eduqui-ere behar dugula.

H. Hala da eguia.

M. Legueac eguiazqui Iaincoaren cerbitzatzeco formá eracusten duenaz gueroz, Christinoac eztu vici behar, harc manatzen duen beçala?

*Legueá nehorc ez perfectoqui cõplitzen.*

H. Bay: baina halaco infirmitatea da gutan guciotan, nõ nehorc ecin bere eguimbidea eguin baiteçaque perfectoqui.

M. Cergatic bada Iaunac, gure ahala iragaiten duen perfectionebat gureganic galdeguiten du?

H. Eztu deus galdeguiten, gu eguitera itzeradoqui ezgarenic. Goiticora, baldin Leguean manatzen çaicun formaren araura vicitzen cinez enseya bagaitez, perfectionezco eguimbidetic vrrun bagara-ere, Iaunac eztraucu escaz garena imputatzen ez contatzen.

M. Guiçon guciez minço aiz generalqui ala ez fidelez bai-

léz baicen ?

H. Iaincoaren Spirituaz regeneratu eztén guiçonac, den punčturic chipiena ecin eguiten has-ere deçaque. Guehiago, Leguetic cembeit parte complitzen luenic erideiten baliz-ere, ecin halacotz quitto ahal liçate. Ecé Iaincoac maradicatu declaratzen ditu Leguean diraden gauça guciac compliturenn eztituztenac.

*Deut.27.26* *gala.3.10*

*Ministrea.*

HOrretaric concluditzeco diagu, ecen bi guiçon mota diraden beçala, bi officio dituela Legueac.

*33 Igandea*

H. Eguia da. Ecen eztu infideletan deus berceric eguiten, hec Iaincoaren aitzinean excusa gabe eguiten baititu baicé. Eta haur da S. Pauléc erraiten duena, Leguea herioaren eta damnationearen ministerio deitzen duenean. Baina fidelac baithara berce officio du.

*Rom.3.28* *2.cor.3.7*

M. Eta cein ?

H. Lehenic, ceren Legueac iracasten drauenean nola bere obréz ecin iustifica daitezquen, humiliatuz dispoſatzen baititu bere saluamenduaren Iesus Christ baithã bilhatzera. Guero eguin ahal deçaqueten baino guehiago Legueac galdeguiten duenean, harçaz auisatzen ditu, Iaunari othoitz daguioten indar eta bothere eman diecén, eta bere buruac bethiere hoguédun eçagut eraciten drauzte, vrgulutsu eztitecençat. Berçalde, bridaturic beçala dadutza fidelac, Iaincoaren beldurrean eduqui ditzançát.

*Leguearen officioa.*

M. Erranen diagu beraz, ecen mundu hunetan gareno iagoitic Leguea complitzen ezpadugu-ere, eztela gauça mengoa gabea, ceren gureganic halaco perfectionebat galdeguiten duen. Ecen halatan iracasten guiaitic, cer chedetara ari behar dugun, gutaric batbedera bethi hartara, Iaincoac eguin draucan gratiaren arauez, heltzen enseya eta auança dadinçát.

H. Hala da eguia.

M. Eta eztugu iustitia guciaren regla perfecta Legueã?

*Legueco obedientiá.*

H. Bay hambat perfecta, non ezpaitu Iaincoac gureganic deus berceric galdeguiten harigarreitzan baicen, baina harçaz berçalde cerere guiçonac eguiten baitu, hura gucia arbuiatzen eta iraizten du. Ecen ezta ha-

*1.Sam.15.11* *ierem.7.30*

ren gogaraco sacrificioric obedientiá baicen.
M. Cer probetchu eguiten duté beraz Prophetéc eta Apostoluéc eguiten dituzten admonitione remonstrança, manamendu eta exhortatione guciéc?
H. Hec eztiradé Leguearen eguiazco declaratione baicen cein ezpaitirade haren obedientiatic gure harçaragarri, baina hartara guidagarri.
M. Baina eztic nehoren vocatione particularez mentioneric eguiten.
H. Manatzen duenean nori berea renda daquión, handic errachqui concludi ahal deçaquegu, gure batbederaren vicitze motán, ceric den gure eguimbidea. Eta badugu berçalde, erran den beçala, Scriptura gucian manamenduetaric batbederaren declarationea. Ecen Iaunac hemen sommarioqui eçarri duena, bercetan luçaquiago eta chehequiago tractatzen du, complituqui instruituac garençat.

*Ministrea.*

*34. Igãdea Iaincoaren eguiazqui ohoratzeco hirurgarrẽ punctua.*

IAincoaren ohoratzeco bigarren parteaz, obedientiáz, asco luçaqui minçatu garenaz gueroz, minça gaitecen orain hirurgarren parteaz.
H. Hirurgarrena, gure behar gucietan Iaincoaren inuocatzea dela erran dugu.
M. Aditzen duc ecen hura bera inuocatu behar dela?
H. Bay: ecen hori da haren Diuinitateari dagocan ohore propribat, eta horren galdez dago.
M. Eta hori horrela bada, cer moldez permettitzen çaicu gure aiutatan guiçonén requeritzea?
H. Bi gauça hautan, differentia handia da: ecen Iaincoa inuocatzen dugunean testificatzen dugu, ecen deus onic eztugula vste harenganic baicen, eta ezgarela bercetara retiratzen: badaric-ere guiçonén aiutá bilhatzen dugu harc berac permettitzen draucun becembatean, eta hæy gure aiutatzeco bothere eta moyen emaiten drauen becembatean.
M. Hic aditzen duc beraz ecen guiçonetaric aiuta galdatzea, eztela Iaincoa bera inuocatu behar dugunaren contra, ceren ezpaitugu gure confidançá hetan eçarten ez hetara buru eguiten, Iaincoac bere onén administra-

çale eta despenser gure aiutatan ordenatu dituen becembatean baicen.

H. Hala da. Eta cerere vngui hetaric ethorten baitzaicu, Iaincoaganic beraganic beçala recebitu behar dugu, nola eguiazqui harc igorten baitraucu hayen escuz.

M. Eta eztrauegu guiçoney esquerric eman behar eguiten drauzquiguten vnguiez eta placerez?

H. Bay: are berce raçoinic ezpaliz-ere ceren Iaincoac bere onetaric hayén escuz guri communicatzeco ohore hura eguiten drauen, ecen hala eguiten duenean, hetara-ere obligatzen gaitu eta nahi du hetara itzeradoqui garén.

*Saindu hilén eta Ainguerueн inuocatzea.*

M. Hortic possible da concludi ahal deçagun, ecen Aingueruric ez mundu hunetaric bercerat ioan diraden sainduetaric batre eztuguла inuocatzeco.

H. Bay: Ecen Iaincoac saindu hiley gure aiutatzeco carguric nehonere eztrauc eman. Ainguerueź den becembatean, Iaincoa gure probetchutan heçaz cerbizatzen badere eztu nahi ordea hec inuoca ditzagun, ez hetara retira gaitecen.

M. Horlatan hic erran nahi duc ecen Iaincoac berac eçarri vkan duen ordenançaren araura eztén gucia, haren vorondatearen contra dela.

*Infidelitatezco signoa.*

H. Hala da ecen Iaincoac berac emaiten draucunaz content ezpagara, seygnale segura da ecen infidel garela. Guehiago, baldin gure recursa haren manamenduaren araura Iaincoagana beragana vkan bidean, Saindu hiletara edo Ainguerüetara retira bagaitez, edo cerbait confidança hetan eçar badeçagu, idolatriatan erorten gara, Iaincoac beretzat ber reseruatu duena hæy attribuitzen eta emaiten drauegun becembatean.

*Ministrea.*

*35. Igandea*

DAnçugun orain Iaincoari othoitz eguiteco maneraz. Asco da mihiz othoitz eguitea, ala spiritua eta bihotza-ere necessario dirade?

H. Ezta mihia bethi necessario, baina adimendua eta

affectionea bethiere behar dirade.

M. Nolatan hori phorogaturen duc?

H. Iaincoa, nola Spiritu baita, spirituaren eta bihotzaren galdez dago, eta principalqui orationean, ceinez harequin communicatione baitugu. Eta halacotz da, ezpaitraue promettatzen hurbil içanen çayela egui-azqui inuocaturen duteney baicen: eta contrariora, maradicatzen ditu fictionez eta hypocrisiáz affectioneric gabe hari othoitz eguinen draucaten guciac.

*Bihotzez othoitz egaiteco.*

*Psal.145.18*
*esa.29.20*

M. Beraz mihi hutsez affectionea gabe erraiten diraden orationeac alfer dituc.

H. Eztirade alfer solament, baina Iaincoari desplacétere bazaizquio.

M. Bada othoitzeric eguitean nolaco affectionea behar dugu?

H. Lehenic behar da eçagut eta sendi deçagun gure miseriá eta paubreciá, guero sendimendu hunec engendra deçan gutan desplacerbat eta herstturabat: guehiago behar dugu, gure bihotzac othoitz eguitera irachequi eta enflamma ditzaqueen Iaincoaganic gratia impetratzeco desirbat.

M. Eta hori gure naturatic heldu da, hala Iaincoaren gratiatic?

H. Iaincoac berac gutan obra deçan behar da: ecen gu sorregui gara: baina Iaincoaren Spirituac erran ecin daitezqueen suspirioetara incitatzen gaitu, eta formatzen du gure bihotzetan, Iaincoac berac gureganic orationean galdeguiten duen beçalaco affectionebat eta zelobat, S. Paulec erraiten duen beçala.

*Rom. 8.25*
*gal.4.6*

M. Eta horrez erran nahi duc ecen Iaincoaren Spirituaren beguira egon behar dugula, eta othoitz eguitera ezgarela solicitatu eta incitatu behar?

H. Ez: aitzitic contrarioa: ecén fidelēc bere buruac othoitz eguitera hotz eta nagui eçagutzen dituztenean, behar da othoitz daguioten Iaunari, nahi dituen othoi, bere Spirituaz inflammatu eta behar beçala othoitz eguitera moldatu.

M. Baina hic eztuc aditzen othoitz eguitean mihia guciz alfer dela.

H. Ez:ecen anhitzetan mihiac aiutatzen du spiritua e-ta Iaincoaganic aldaratzetic beguiratzen. Eta berçalde, gure berce membro gucien gainetic mihia Iaincoaren ohoretan emplegatzeco eman içan çaicunaz gueroz, raçoin da haren ahal gucia gauça orotan hartara applica dadin: eta anhitzetan, bihotzeco affectione handiac vste gabean-ere mihia minça eraciten du.

M. Hori horrela denaz gueroz, cer emendio du nehorc berac aditzen eztuen lengoagez othoitz eguitea?

H. Hura ezta othoitz eguite, baina hypocrisia eta Iaincoaren desohoratze eta truffatzebat da. 1. Cor. 14. 11

*Ministrea.*

36. Igădea

IAincoari othoitz eguiten draucagunean, probetchaturen garén, ala ez, iaquin gabe venturán othoitz eguin behar dugu, ala segur behar gara içan gure othoitzác ençunen diradela.

H. Gure othoitza gucietan fundament haur behar dugu bethiere, ecen Iaincoac ençunen gaituela, eta galde-guiten dugun gucia beharra dugun lekurano emanen draucula: halacotz dio S. Paulec, ecen Iaincoaren eguiazqui inuocatzea fedetic heldu dela. Ecen baldin Iaincoaren ontassunaz eta gureganaco amorioaz segura ezpagaitez, ecin hura eguiazqui inuoca deçaquegu. Cōfidança segurequin othoitz eguiteco. Rō. 10.14

M. Cer içanen da bada dudán othoitz eguiten duténéz dudatzē dutelaric Iaincoac ençunē dituenéz bay, ala ez?

H. Halaco othoitzác alfer dirade eta vano, cerē ezpaitirade eceinere promessen gainean fundatuac. Ecen sinhesterequin esca gaitecē manua dugu, bayeta promessa, ecen ençunen garela. Marc. 11. 24

M. Baina daquigun, nondic ezpa nolatán ahal guenduqueen confidança hori, eta Iaincoaren aitzinean presentatzeco hardieçá, ikussiric ecen guciz indigne eta bekatore garela?

H. Lehenic baditugu promessac, eta gu indigne içanagatic, dudatu gabe, hetan fundatu eta fermatu behar gara. Guero berçalde, baldin Iaincoaren haour bagara, berac bulkatzen eta incitatzen gaitu bere Spirituaz, harengana gure eguiazco Aitagana beçala familiarqui re-

tira gaitecen. Eta ceren bekatore gaicho eta lurreco chichari baicen ezpaicara, haren maieſtate handiaren aitzinean comparitzera beldur ezgarençat, emaiten draucu Ararteco, Ieſus Chriſt bere Seme gure Iauna, haren amorecatic ſartze vkanic, eztaguigun dudaric ecen gratia eguinen çaicula.

M. Eta badaducac hic ecen ezrugula Iaincoa inuocatu behar Ieſus Chriſt Iaunaren icenean baicen?

*Chriſten icenean baicen ez othoitz eguiteco.*

H. Hala aditzen dut nic. Ecen hala dugu manu expreſſa promeſſarequin, ecen haren interceſſionearen verthutez, gure othoitzác ençunen diradela.

*Ioan 14.13*

M. Beraz ezguiaitic nehorc temerario ez arrogant eſtimatzeco baldin familiarqui Iaincoagana retiratzen bagara Ieſus Chriſt Aduocat dugula eta hura aitzineco eçarten dugula, haren moienez Iaincoac gu-ere bere gogaraco eduqui eta ençun gaitzançat.

*Rom. 8.33*
*1. Ioan. 2.1*

H. Ez: ecen molde hartan othoitz ari dena, Ieſus Chriſten ahoz othoitz eguiten balu beçala da, ceren berac eman baitraucu libertate hura, eta berac interceditzen eta aduocatzen baitu guregatic.

*Miniſtrea.*

*37 Igãdea.*

MInça gaitecen orain gure orationeac cer ſubſtantiataco eta nolaco behar diraden. Othoitz eguiten duguneán galdeguiteco dugu gogora ethorten çaicun gucia, ala badugu hunen gainean regla iaquinic?

H. Baldin gure fantaſiari bagarreitza, gaizqui reglatuac içanen dirade gure orationeac. Ecen hambat gara itſu eta ignorant, non cer galdeguiteco dugun, ez cer behar dugun ecin iugea baiteçaquegu, eta hambat dirade gure deſirac deſordenatuac, non behar baita brida eduqui diecegun.

M. Cer remedio bada horren gainean?

H. Ezta berceric, Iaunac berac iracats gaitzan baicen, nola behar den hobequi dacuſſan beçala: eta behar dugu quaſi eſcutic beçala guida gaitzan, eta gu hari iarreiqui gaquizquión.

M. Eta horré gaineã cer inſtructione emã vkan draucu?

H. Scriptura gucia inſtructionez bethea da, baina chede iaquin-bat eta eguiazcobat guenduençát, eman

vkan draucu Iaunac reglá eta formá, ceinetan baitirade laburqui, gure oratione gucietan galdeguitera permettitzen ezpa manatzen çaizquigun gauça guciac.

M. Dançugun bada hura.

H. Iesus Christ Iauna bere discipuluéc othoiztu cutenean, iracats litzan cer moldez othoitz eguin behar lutén. Ihardets ciecén, Othoitzeric eguinen duçuenean, albeitzinarrate hunela:

Matth.6.9 Luc.11.2

*Gure Aita ceruetan aicena, Sanctifica bedi hire icena: Ethor bedi hire Resumá: Eguin bedi hire vorondatea, cerua͂ beçala lurrea͂ere. Gure eguneco oguia iguc egu͂: Eta barka ietzaguc gure bekatuac, nola guc ere offensatu gaituzteney barkatzen baitrauegu. Eta ezgaitzala sar eraci tentationetan baina deliura gaitzac gaitzetic. Ecen hirea duc Resumá, Puissançá, eta Gloriá secula seculacotz. Amen.*

*Iesus Christec iracatsi draucun orationea.*

M. Hori hobequi adi deçaguncát, erradac horretan cembat articulu diraden.

H. Sey: eta lehen hirurac, gureganaco consideratioric batre gabe, Iainçoaren gloriara behá daude. Berceac guregatic dirade eta gure probetchura beha daude.

*Oratione dominicalac sey parte.*

M. Eta nola: gure probetchutaco ezte͂ gauçaric Iaincoari escatu behar gaitzaitza?

H. Gauça claroa da, harc bere ontassun handiagatic gauça guciac hala dispausatzen eta ordenatzen dituela, non deus ecin baitate haren icen sainduaren gloriatan, gure saluamenduagatic-ere eztén. Bada, haren icena sanctificatzen denean, hura gure sanctificationetara itzultzen du: eta haren Resumá ethorten denean, gu-ere hartan participant beçala gara. Baina gauça hauc desiratzen eta galdeguiten ditugunean, haren gloriara solament behatu behar dugu, eta ez gure probetchura.

M. Hire erranaren arauez lehen hirur requesta hauc gure probetchutan badituc, baina eztitiagu intentione hartara eguin ez desiratu behar: baina solament Iaincoa glorifica dadin desirequin.

H. Hala da. Eta berce hiruretan-ere Iaincoaren glorificatzera sur behar dugu, eta bethiereco gure desir guciac fin hartara beha egon behar dirade.

*Ministrea.*

*38. Igãdea* GAtocen orain hitzén declarationera. Eta aitzinago ioan gabe, Cergatic hemen Iaincoa lehen gure Aita deitzen dugu ecen ez berce icenez?

*Iaincoa cergatic Aita deitzen.* H. Ceren, othoitzeric eguinen dugunean, gure conscientiac fermuqui seguratuac içan behar baitirade, Iaincoa deitzen da aitatassunezco icen eme eta placent hunez, frangoqui harengana ioaitera dudaric eztaguiguncát.

M. Venturatzeco gara bada Iaincoagana familiarqui retiratzera haourbat bere aitagana beçala?

H. Bay: etare galdeguiten duguna impetraturen dugulaco segurança handirequin. Ecen baldin guc, gaichto garelaric, ecin iraitz badi tzaquegu gure haourrac gauça onen esquez daudenean: Cembatez gutiago iraitziren gaitu gu gure Iainco Aitac, cein baita ez solament on, baina ontassuna bera, eta ontassun gucia eguiten duena? *Mat.7.9*

M. Eta icen horretaric ezteçaquegu phoroga ahal erran dena, ecen gure oratione guciac fundatuac içan behar diradela Iesus Christen intercessionean?

H. Bay eguiazqui: ceren Iaincoac ezpaiquaitu bere haourretan eçagutzen, Iesus Christen membro garen becembatean baicen.

*Gure.* M. Eta cergatic hic Iaincoa, gure Aita deitzen duc, eta ez eure ber, particularqui?

H. Fideletaric norc nahi dé, Iaincoa bere Aita dei ahal deçaque particularqui. Baina Iesus Christec emã draucun othoitz eguiteco forma hunetan, gucién icenean othoitz eguiten iracasten gaitu, daquiguncát ecen eztugula othoitz eguitean gure buruez artha behar solament, baina gure hurcoetara-ere charitatez vsatu behar dugula, guciéc Aitabat dugunaz gueroz, eta elkarren haourride garenaz gueroz.

M. Cer erran nahi da, erraiten duanean, Ceruëtan aicena?

H. Hambat nola erraiten banu, Gora, Botheretsu, Incomprehensible dela.

M. Nola hori eta cergatic?

H. Hura inuocatzen dugunean gure adimenduén goiti alchatzen ikas deçagunçat, ezteçagũ deus carnalic edo lurrecoric hura baithan imagina, ez hura gure capacitatearen araura neurt, ez eztaquigun irudi hura gure vorondatera subiugatu behar dela, baina haren maiestate gloriosoa adora deçagun. Halaber, hura baithan confidãça fermuagoa dugunçat, gauça gucién Iabe eta Gobernadore denaz gueroz.

*Ministrea.*

DEclara ieçaguc orain lehen requestá.

H. Sanctifica bedi hire icena.

*39. Igãdea. Lehen requesta.*

M. Cer aditzen duc haren icenaz?

H. Iaincoaren icenaz Scripturác aditzen du, haren icen eta aippamen guiçonén artean celebratzen dena: requesta hunetan bada guc dugu desiratzen eta othoitz eguiten, haren gloriá exalta dadin leku orotan eta gauça gucietan.

*Nola Iaincoaren icena sanctificatzen.*

M. Eta nola, Iaincoaren gloriá hert edo emenda ahal daite?

H. Ez bere baithan: baina erran nahi da, haren gloriá, nola bide baita, hala manifesta eta eçagut-ere dadin, eta Iaincoac eguiten dituen obra guciac, nola eguiazqui baitirade glorioso, halaco guciéz eçagut-ere ditecen, alde gucietara guçaz glorifica eta lauda daiten beçala.

M. Eta bigarren requestán, cer aditzen duc Iaincoaren Resumaz?

*2. requestá.*

H. Hura bi punctutan consistitzen da principalqui: bata da, bere Spirituaz guida eta goberna ditzan bere elegituac: bercea, haren obedientián vici eztiradenac eta reprobatuac abysma eta confundi ditzan, claroqui agueri dençat ecen eztela deus haren bothereari resisti ahal deçaqueonic.

*Certã Christen resuma cõsistitzen.*

M. Eta Resuma hori, cer moldez ethor dadin othoitz eguiten duc hic?

H. Fidelén eta Iaincoaren haourrén contua egunetic egunera augmenta eta multiplica dadin, eta complimẽdua duqueiteno, guerotic guerora bere gratietaric eta dohainetaric parti diecen, bere eguiá eçagut eta recebi eraci deçan: bere iustitiá manifestaturic, eta Satan be-

re resumaco ilhumbe guciarequin confunditurie, iniquitate gucia deseguin eta aboli dadinçat.

*Christē resumaren perfectionea.*

M. Eta hori ezta ia eguiten?

H. Eguiten da parte, baina desiratzen dugu, haren Resuma haur ardura emenda eta auança dadin, bere perfectionera eta complimendura hel daiteno, eta perfectione hunetara heldu date azquen iudicioan: orduan Iaincoa exaltaturen da, eta creatura gucia haren botherearen eta handitassunaren menera humiliaturen: eta bera içanen da gucia gauça gucietan.

*1. Cor. 15. 25.*

*Ministrea.*

*40. Igādea.*

IAincoaren vorondatea eguin dadin erraiten duanean cer galdeguiten duc?

H. Creatura guciac harén obedientiara ethor ditecen, eta gauça gucia haren vorondate eta placer onaren araura eguin dadin.

M. Eta badaritzac hic, haren vorōdatearen contra deus eguin ahal daitela?

*3 requesta, nola Iaincoaren vorondatea complitzeco den.*

H. Othoitza hunetan eztugu galdeguiten, Iaincoac cer bere baithan eguitera ordenatu baitu, huraeguin dadin: baina rebellione eta desobedientia guciac deseguinic, gucién vorondateac bere vorondatearen obedientiara erekar ditzan.

*Arramberritzea.*

M. Eta othoitza hori eguiten dugunean eztugu gure vorondate propriéz renuntiatzen?

H. Bay: eta ez solament gure desir harén vorondatearen contra diradenac gutan deseguin ditzan, baina are adimendu eta bihotz berriric gutan forma deçan: halaco maneraz non gure buruz deus eztugun nahi, baina gure nahi eta vorondate guciac bere Spirituaz bere vorondate sainduaren araura conforme eguin eta goberna ditzan.

M. Cergatic erraiten duc, Ceruan beçala lurrean-ere.

*Iaincoaren vorondatea ceruan eguiten.*

H. Ceren haren creatura celestialac, cein baitirade haren Ainguerua c, ezpaitabiltza berceren onduan, nōdic contradictioneric batre gabe, hura obedi deçaqueten baicen, manera berean lurrean-ere eguin dadin desiratzen dugu, haren obedientia vorondatezco batetara ethor ditecen guiçon guciac.

*Ministrea.*

GAtocen orain bigarren partera. Eguneco eſcatzen aicen oguiaz cer aditzen duc?

*41. Igãdea.*

*4. requeſtá.*

H. Generalqui gure gorputzaren behar diraden gauça guciac : ez ſolament ſabelera eta ſoinera behar duguna, baina vicitze hunetan baquez içateco cer-ere behar dugula Iaincoac baitacuſſa hura gucia galdeguiten dugu: gure oguia baquez ian ahal deçagun.

M. Eta nola eſcatzen atzayo Iaincoari eure hazcurria eman dieçán, ikuſſiric ecen berac gure eſcuezco trabailluz haren irabaztera manatzen gaituela?

*Eguneco oguiaren eſcatzea cer.*

H. Gure viciagatic trabaillatu età nekatu behar bagara-ere, gure trabailluac, thornuac ez diligentiác ezgaitu vici, baina Iaincoaren benedictioneac berac, ceinec gure eſcuezco lana benedicatzen baitu. Eta guehiago, aditu behar dugu ecen ézgaituztela viandéc hatzen ez entretenitzen, hetaric nahi becembat dugula-ere, baina Iaincoaren verthuteac hayén moienez : ecen hec eztute bere berez verthuteric batre, baina Iaunac bere ontaſſunagatic gure hatzeco inſtrument beçala emplegatzen ditu.

*Iaincoac trabaillua benedicatzen.*

*Deut. 8. 3.*

M. Cer çucenez oguia deitzen dugu gure, hura eman daquigun eſquez gaudeñaz gueroz?

H. Ceren Iaincoaren ontaſſunagatic, gure eguiten baita mereci ezpadugu-ere. Eta hunez iracaſté gara, ezteçagun berceren oguia gure deſira, Iaincoaren ordenançaren arauez bidezqui eta legitimoqui irabaciric eta mendicaturic baicen.

M. Cergatic hitz hauc erraiten dituc, Egunecoa, eta Egun?

H. Bi hitz hauçaz iracaſten gara contentamendu vkaitara: eta gure beharrac emaiten duen baino guehiago ez deſiratzera.

*Eguneco oguia.*

M. Othoitza haur gucién commun denaz gueroz, nolatan abratſac, dembora lucetaco prouiſionea dutelaric, eguneco oguiaren eſquez daude?

H. Bay abratſéc baypaubréc haur iaquin behar duté, ecẽ dutégucia, ecin deus valia ahal daquidiela, Iaincoac bere gratiaz vſatzeco eta hartaric goço hartzeco leku emaitẽ

drauen becembat baicen. Bada anhitz dugularic-ere, eztugu deus, beharraren araura Iaunac emaiten duena baicen. *Ministrea.*

*42. Igãdea. 5. requestá.*

BOrzgarren partean cer galdeguiten dugu?

H. Iaincoac, othoi, gure bekatuac barka dietzagun.

*Nehor ez hain saindurie nou barkamẽdu behar eztẽ.*

M. Nehor bada munduan hain iustoric, non barkamendu escatze haur eguin behar eztuén?

H. Ezta nehor-ere: ecẽ Iesus Iaunac othoitz eguiteco forma haur eman draue bere Apostoluey bere Eliçarendaco. Eta norc-ere bere burua punctu hunetaric idoqui nahi bailuque, harc Christinoén compainiá renuntiatzen luque. Eta hunez Scripturác testificatzen draucu, ecen baldin perfectoénac-ere, punctu huts-bat bere buruaren iustificatzeco allegatu nahi balu, hura millatan hoguendun eriden leitela: beraz guciéc recours eta itzurtbide bakoitzbat baicen eztugu, cein baita haren misericordiá.

*Iob. 9. 3.*

M. Bekatuén barkamendu haur, cer moldez eguiten çaicula aditzen duc hic?

*Bekatuén barkamendua, nola.*

H. Iesus Christen hitz beréc eracusten duten moldean. Ecen bekatuac diradela gu herio eternalera obligatuac gadutzaten çorrac, Iaincoac bere liberalitate purez hetaric deliura eta idoqui gaitzaqueno.

M. Beraz hic aditzen duc, ecen bekatuén barkamendua dohainic Iaincoaren misericordiaz eguiten çaicula.

H. Segura da hori: ecen gure bekaturic chipiena-ere guc eguin ahal guenecaquen botherez ecin remedia leite: baina Iaincoaren misericordiatic eta ontassunetic gure barkamendu gucia ethorri behar da.

M. Eta Iaincoac bekatuac barkatzen drauzquigunean, cer emendio handic ethorten çaicu?

*Bekatuén barkamenduéc den emendioa.*

H. Moien harçaz haren gogaraco eguiten gara, iusto eta hoguen gabe baguine beçala, eta seguratzen gara haren gureganaco amorioaz: eta handic heldu çaicu saluamendua eta vicitze eternala.

M. Eta othoitz eguiten dugunean, Iaincoac hala barka dietzagun gure bekatuac, nola guc offensatu gaituzteney barkatzen baitrauegu: aditzen duc hic, ecen bercey barkatuz, barkamendu merecitzen dugula?

H. Ez. Ecen halatan barkamendua eliçate gratiaz ez dohainic, ez eliçate fundatua Iesus Christec bere herioaz eta passioneaz eguin duen pagamenduan. Baina bercec eguin drauzquigun faltác barkatzen ditugun becembatean, haré emetassunari eta benignitateari iarreiquiten guiaizquió, eta manera hunetan eracusten dugu ecen haren haour garela, eta seignale haur emaité draucu gure certificatzeco eta seguratzeco. Baina berçaldera declaratzen draucu ecen gogorgoaz eta rigortassunez berceric haren iudicioan eztugula ceguey vste-ere dugun, baldin offensatu gaituzteney gogotic barkatzera facil eta gogabera ezpagara.

*Bekatuén barkamendua gratiaz.*

M. Beraz hic erran nahi duc ecen nehorçaz eguiten çaiztén faltác ahanz ecin ditzaqueiztenac, eztituela Iaincoac bere haourretan eçagutzen: eta gratia hunetan ecin participant diratequela.

*Iaincoaren haourretan eçagutzen eztiradenac.*

H. Hala da eguia: eta iaquiteco du batbederac, ecen cer neurriz nehorc nehori neurturen baitrauca, hala rédaturen-ere çayola.

*Ministrea.*

CEr dugu orain declaratzeco?

*43. Igãdea.*

H. Ezgaitzala sar eraci tentationetan: baina delliura gaitzac gaitzetic.

M. Eta horrez guciaz eztuc requestabat baicé eguiten?

*6. requestá.*

H. Ez: ecen gueroco partea aitzinecoaren delaratione baicen ezta.

M. Cer da horren sommarioa?

H. Iaincoac, othoi, gaitzean trebucatzetic eta erortetic beguiratu nahi gaituen: eta ezteçã permetti deabruaz, ez gure haraguiaren guthicia gaiçhto bethiere gure cótra bataillatzen diradenéz garait gaitecen: baina hæy resistitzeco eta garaitzeco bothere eman nahi draucun, eta bethiere escu eduqui dieçagun, gaitz gucietaric beguiratzen eta ontassun orotara guidatzen gaituelaric.

*Rom. 7. 5. Gal. 5. 16. 1. cor. 10. 13*

M. Eta hori noiz eta nolatan eguiten da?

H. Iaincoac bere Spirituaz hala gobernatzen gaituenean, non vnguiari eta harenganaco eguimbideari baicarreizqueo, eta gaizquiari eta bekatuari ihes eguin baiteçaqueogu. Ecen Spiritu sainduaren verthutez dea-

bruari, bekatuari eta gure haraguiari garaithu behar gaitzaizte.

M. Eta guciac dirade aiuta horren behar?

1.Pier.5.8. H. Bay: ecen bethiere deabrua keichu dabila gure inguruan, lehoin marrumaz dagoen baten ançora, nor nõdic irets deçaqueen bilha: eta gure ethortez hãbat gara flaccu eta ezdeus, nõ guçaz nahi luena bertan eguin baileçaque, baldin Iaincoac victoria vkaitera fortifica ezpaguença.

M. Cer erran nahi da tentationea?

H. Leku hunetan tentationea errañ nahi da deabruaren finecia eta enganioa, ceinéz vsatzen: baitu gure hatz amaiteco, erratchenic garenaren araura: eta baldin Iaincoaré aiutá ezpaliz nahi luena fitetz eguin leçaque gure gainean, ecen gure vorondatea, vnguira baino gaizquira emanagoa da.

M. Baina cergatic Iaincoari galdeguiten draucaĉ hic, ezeçan sar eraci tentationetan, ikussiric ecen deabruaren officio propria dela hura?

H. Nola Iaincoac bere misericordiagatic bere fidelac beguiratzen baititu, eta ezpaitu permettitzen deabruac hec engana ditzan ezeta bekatuac garait: hala punitu nahi dituenac, eztitu abandonnatzen solament eta bere gratiá hetaric retiratzen, baina deabruari vtziten-ere badrauzquio, harc itsu ditzan eta adimendu reprobatutan bere tyranniaren azpian eduqui ditzan.

M. Certaco erraiten dugu azquenean, Ecen hirea duc Resumá, Puissançá, eta Gloriá, secula seculacotz?

H. Hatsean beçala finean-ere gure orhoit eraciteco, ecen gure orationeac Iainco Iaunean, eta haren bothearean eta ontassunean fundatuagoac diradela ecen ez gutan, cein ezpaicara digne hari requestaric eguitera gure ahoaren irequiteco: eta ikas deçagunçat ecen gure othoitza guciac Iaincoaren laudatzez finitu behar ditugula.

*Ministrea.*

44.Igãdea. OThoitzeco forma hunetan den gauçaric baicen ezquaitzaitza Iaincoari escatu behar?

H. Othoitza eguitean berce formaz eta berce hitzez

vſatzeco libertatean bagara-ere, othoitzeco forma hunetara bil eta erekar ecin daiten orationeric batre Iaincoaren gogaracoric ecin date.

M. Engoitic ordu duc gatocen Iaincoari rendatu behar draucagun ohorearen laurgarren partera.

H. Erran dugu hura dela Iaincoaren eguiazqui on guciaren Iabe eta emaile bihotzez eçagutzea eta ahoz aithortzea, glorifica deçaguncát.

*Iaincoáren eguiazqui ohoratzeco laurgarren manerá.*

M. Eta horretacotzat eztraucu reglaric eman?

H. Scripturán diraden laudorio eta eſquer emaite guciac, reglatzat eta doctrinagarri eduqui behar ditugu.

M. Punctu hautaric ezta deus hunqui içan orationean?

H. Bay: ecen deſiratzen dugunean ſanctifica dadin haren icena, deſiratzen dugu haren obra guciac diraden beçala glorioſo eçagut ditecen. Halaco maneraz non, punitzen badu, eçagut dadin iuſto: barkatzen badu, miſericordioſo: bere promeſſac complitzen baditu, eguiati. Eta labur erraitera, haren obretan ikuſten dugun gauça guciéc haren glorificatzera incita gaitzaten: eta haur date bere ontaſſun oroz hari laudorio emaitea.

M. Erran dugun orotaric cer concludi ahal deçaquegu?

*Ioan.17.3.*

H. Eguiác berac iracaſten gaituena, eta nic hatſean hunqui dudana, ecen vicitze eternala dela haur, Iainco eguiazcoaren eta Ieſus Chriſt harc igorri duenaren eçagutze a: eçagutzea diot, bidezqui ohora eta cerbitza deçaguncát, ez ſolament Iaun eta Iabe beçala, baina Aita eta Saluadore beçala: eta gu-ere halaber, garen haren gloriataco haour, cerbitzari eta populu.

*Mat.1.23.*

*Miniſtrea.*

*45.Igãdea.*

CEr bidez ezpa nolatan nehor on handi horretara hel ahal daite?

H. Hunetacotzat vtzi vkan draucu bere Hitz ſaindua, cein baita ceruëtaco Reſumara gure ſartzeco bortha beçala.

*Saluamendua Iaincoaren hitzean preſentatzen.*

M. Eta non hartzen duc Hitz hori?

H. Scriptura ſainduetan.

Gure probetchuric eguitecotz, Hitz horrez nola vsatu behar dugu?

H. Eguiazqui harçaz vsatzen duquegu, baldin bihotzeco segurança bethetan hura recebitzen badugu, eguia cerutic iausten dena beçala, gure buruac haren obedientiara submettitzen ditugularic: baldin hura affectionatuqui onhesten, ençuten eta imprimitzen badugu, gure vici gucian hartan manatzen çaicun beçala vicitzeco gogorequin: hunela harçaz vsat deçagun orduan, date gure saluamendutacotz: hunetacotzat fidelén ordenatu-ere den beçala.

M. Eta hori gucia gure botherean da?

H. Ezeta batre, baina haur gucia Iaincoac eguiten du gutan bere Spirituaz.

M. Bada iracasten çaicun doctrinaren ençutera eta ikastera eztugu diligentiaric eçarteco?

*Ikasten pena eçarteco*

H. Bay aitzitic. Eta batbedera bere aldetic Iaincoac eman draucan maneraren araura enseyatzeco da: eta guciz fidelén congregationetaco predicationetara ioanez: ceren Hitz haur Christinoén congregationetan declaratzen baita.

M. Aditzen duc hic ecen eztela asco nore bere etchean Iaincoaren hitza iracur deçan, baldin guciac elkargana, doctrina ber baten ençutera biltzen ezpadirade?

H. Hala aditzen dut, Iaincoac hala moienac emaiten dituenean.

M. Eta hori phoroga ahal eçaque?

*Ephes.4.11*

H. Asco phorogança dugu Iaunaren vorondateaz, ecen harc ordenança eta moien hura çarri vkan du bere Eliçán, ez bigagatic edo hiruregatic, baina generalqui guciacgatic, eta declaratu vkan du ecen hura dela Eliçaren edificatzeco eta entretenitzeco moien bakoitza. Dadu-cagun bada guciéc regla haur, eta ezteçagula gure Magistruac baino guehiago iaquitera presumi.

*Eliçaco Pastoréz.*

M. Gauça beharra eta necessarioa da Pastorac diraden Elicetan?

*Mat.10.40*
*Luc 10.16.*
*Ioan.13.20*

H. Bay: eta nehor hæy beha daquién, eta hayén ahoetaric beldurrequin eta humilitaterequin Iaunaren doctriná recebi dadin. Bada, norc-ere hayén ençuteaz con-

turic ezpaitu eguiten, Christ bera menospreciatzen du eta bere burua fidelén compainiatic appartatzen.

M. Baina asco du nehorc behin instruitua den, ala bere vici gucian continuatu behar du?

H. Hatsea gauça gutibat da, nehorc bethi perseuera eta continua ezpadeça. Ecen finerano Christen discipulu içan behar dugu. Eta Ministreac ordenatu vkan ditu Eliçan haren icenean populuaren iracasteco eta instruitzeco.

*Ministrea.*

ETzaicu Iaincoa bere Hitzaz baicen communicatzen berce moienez? 46.Igãdea.

H. Bere hitzaren predicationearequin bat eguiten ditu Sacramenduac-ere.

M. Cer da Sacramendua?

H. Sacramendua da, Iaincoaren gureganaco amorioaren testificatione exteriorbat, ceinec signo visiblez gauça spiritualac represéntatzen baitrauzquigu, Iaincoaren promessac gure bihotzetan hobequi imprimi ditecençát, eta gu segurago gaitecençát. Sacramenduéz.

M. Signo visible batec hambat bothere ahal duque, nõ saluamenduco gauçán gure conscientiác certifica eta segura ahal ditzan?

H. Ez bere berez, baina ceren Iaincoaz hartacotzat ordenatu içan baita.

M. Iaincoaren promessén gure bihotzetan ciguilatzea Spiritu sainduari eman çayonaz gueroz, hic nola Sacramenduey attribuitzen drauec officio hura?

H. Differentia handia da batetic bercera, Ecen Iaincoarén Spiritua da eguiazqui gure bihotzac hunqui eta iratzar ahal ditzaqueena, gure adimenduac illuminatzẽ eta gure conscientiác seguratzen dituena, halaco maneraz non hauc gucioc remerciamendurequin eta laudoriorequin hari berari eçagutu behar baitzaizquio. Baina Iauna nola irudi baitzayo hala Sacraméduéz cerbitzatzen da instrumét beheragoéz beçala, bere Spiritu sainduarén verthuteari deus edequi gabe.

M. Hic beraz Sacramenduén indarra eta verthutea eztuc estimatzen element exteriorean consistitzen dela:

baina Iaincoaren Spiritutic gucia proceditzen dela.

H. Hala da : berac ordenatu dituen möienén araura, Iaincoac obratu placer duen beçala, bere puissançari deus edequi gabe.

M. Eman ahal deçaquec raçoinic cergatic Iaincoac hala eguiten duen?

*Sacramenduac gure infirmitateagatic ordenatu.*

H. Gure infimitatearen sulageamenduagatic. Ecen baldin gu natura spiritualez baguina Aingueruac beçala, spiritualqui Iaincoa eta haren gratiác cótempla ahal guençaque:baina ceren gure gorputzéz inguratuac baicara,behar dugu gauça spiritualac eta celestialac represetatu nahi drauzquigunean figuraz vsat dieçagun : ecen bercela ezliçate possible comprehendi ahal guençan. Eta berçalde gure probetchua da gure sendimendu guciac exercita ditecen haren promes sainduetan,hetan hobequi confirma gaitecençat.

*Ministrea.*

*47.Igãdea.*

IAincoac gure beharragatic Sacramenduac ordenatu drauzquigunaz gueroz, ezliçate arrogantia eta presumptione handieguia, heçaz nehor iragan ahal leitela pensatzea-ere?

*Sacramenduac necessario.*

H. Bay segur, hambat non norc-ere bere burua hetaric priuatzen baitu, aleguia hura iragan ahal, harc Iesus Christ eta haren gratiá menospreciatzé baititu,eta Spiritu saindua iraunguiten.

M. Baina cer gratiazco segurança eman ahal deçaquete Sacramenduéc, ikussiric ecen bay onéc bay gaichtoéc bardinzqui recebitzen dituztela?

H. Gaichtoéc eta sinheste gabéc Sacramenduetan presentatzen çayen gratiá heçaz den becembatean ezeztatzé badute-ere,ecin daidite ordea halacotz, Sacramenduéc fideletan bere indarra eta proprietatea eztuten.

M. Cer moldez bada eta noiz Sacraméduéc eguiazqui obratzen eta executatzen dute bere proprietatea?

*Sacramenduetaric den probetchua.*

H. Federequin recebitzen ditugunean, hetan Iesus Christen eta haren gratiaren bilha gabiltzalaric.

M. Cergatic dioc hetan Christ bilhatu behar dugula?

*Sacramenduetan Iesus Christē bilhatzea.*

H. Aditzera emaiteagatic ecen ezgarela element visibletā gueldirzeco,hetaric gure saluaméduа vste baguindu beçala:eta eztugu imaginatu behar hetan barna da-

goela cerbait gratia gorderic, baina aitzitic signoa recebitzen dugu aiutatan, chuchenqui Iesus Iaunagana gure saluamenduaren eta ontassun ororen vkaitera guida gaitecençát.

M. Sacramenduetan fedea necessario denaz gueroz, nola dioc hic ecen hec eman içan çaizquigula fedearen confirmationetan, gu Iaincoaren promessez segura gaitzatençat?

H. Ezta asco fedea gutan behin hassia den solament, baina haci eta entretenitu-ere behar du, guerotic guerora augmenta dadinçat. Bada, haren hatzeco fortificatzeco eta augmentatzeco, Iaunac emaiten drauzquigu Sacramenduac. Eta haur declaratzen draucu S. Paulec, dioscunean ecen heçazco vsagea dela, Iaincoaren promessac gure bihotzetan ciguila ditecençát.

*Fedea sacramēduez augmentatzen.*

*Rom.4.11.*

M. Baina ezta infidel içateco seignalea Iaincoaren promessac bere berez berce aiutaric gabe asco fermu etzaizquigunean?

H. Hura, fedearen chipi eta flaccu içate seignalebat da, eta Iaincoaren haourrec-ere badute hura, baina halacotz fidel içatea eztuté galtzen, oraino fede chipitoa eta imperfecta badute-ere. Ecen mundu hunetan gareno, baditu gure haraguiac bere diffidentiazco reliquiác: halacotz bethiere fedean probetchatu eta auançatu behar gara.

*Iaincoaren haourretan den imperfectionea.*

*Ministrea.*

CEmbat Sacramendu dira Christinoen Eliçan?

H. Eztirade biga baicen communic, eta Iesus Christez fidelén compainia guciarendaco ordenaturic.

*48. Igādec. Cembat sacramendu.*

M. Cein dira hec?

H. Baptismoa, eta Cena saindua.

*Baptismoa eta Cena.*

M. Bi Sacramendu hauc certan duté elkar irudi eta certan ez?

*Baptismoaz.*

H. Baptismoa dugu Iaincoaren Eliçara sartzebat beçala. Ecen harçaz testificatzen çaicu, nola estrangér guinadelaric, Iaincoac bere etcheco eta familiaco recebitzen gaituen. Cenáz testificatzen çaicu ecen Aita eguiazco anço Iaincoac gure arimey hacitze eta refectione eman nahi drauela.

*Cenaz.*

M. Hobequi adi ditecençat, gaitecen bataz eta berceaz

bereciqui minça. Eta lehenic, cer da Baptiſmoaren ſignificationea?

*Baptiſmoaren ſignificationea.* H. Baptiſmoac ditu bi parte. Ecen hartan Iaincoac representatzen draucu gure bekatuén barkamendua, eta guero gure regenerationea, edo ſpirituzco arramberritzea. *Rom.6.3. eph.5.26.*

*Miniſtrea.*

*49.Igãdea.* CEr comparatione du vrac gauça horiequin, horrela repreſenta ahal ditzan?

*Baptiſmoco vra.* H. Bekatuén barkamendua ikutze motabat beçala da, ceinez gure arimac bere maculetaric ikutzen baitirade, gure gorputzetaco ſaſutaſiunac vrez ikutzen diraden beçala.

M. Eta regenerationeaz cer dioc?

*Vra cergaticburu gainera emaiten.* H. Ceren gure regenerationearen lehen hatſea baita, gure naturaren mortificationea: eta fina, Iaincoaren Spirituaz berrituac garén. Vra buru gainera emaiten çaicu herioaren ſeignaletan, baina halaco maneraz, non reſurrectionea-ere figuratzen baitzaicu, vr egoizte hura moment batetacotz, eta ez itho gaitezqueé, formán eguiten çaicun becembatean.

*Chriſten odola gure ikusgarria ez vra.* M. Aditzen duc hic ecen vra dela gure arimén ikuzgarria?

H. Ez: ecen hori appertenitzen çayó ſolament Ieſus Chriſten odol guregatic iſsuri içan denari, gu pur eta chahu Iaincoaren aitzineco eguin guençançat: eta haur complitzen da gutan gure conſcientiac Spiritu ſainduaz ihiztatzen diradenean: baina certificationea Sacramenduan dugu. *1.Pier.1.19 1.Ioan.1.7*

M. Aditzen duc hic ecen vra barneco ikutzearen figura baicen eztela?

*Eguiá figurarequin eguiten.* H. Hala da figura, non figuratzen denaren eguia-ere harequin batean baita. Ecen Iaincoac eztraucu deus alfer-promettatzen. Bada ſegura da, ecen bekatuén barkamendua preſentatzen çaicula baptiſmoan eta recebitzen-ere badugula.

M. Gratia haur gucietan indifferentqui complitzen da?

H. Ez: ecen anhitzec bere gaichtataſſunez ezeztatzen duté, baina halacotz proprietate eta natura hartaco iça-

tea Sacramenduac eztu galtzen, haren verthutea eta indarra fidelée baicen ez senditzenagatic.

M. Regenerationeac nondic hartzen du bere verthutea?

H. Iesus Christen heriotic eta resurrectionetic. Ecen haren herioac du halaco verthutea, non gure Adam çaharra crucificatzen baita, eta gure natura vitiosoa ohortzité beçala baita, gutan regnatzeco guehiago bothereric eztuençat. Eta vicitzearen arramberritzea, resurrectionetic heldu da, Iaincoaren iustitiari garreitzançat.

M. Nolatan gratia hori applicatzé çaicu Baptismoan?

H. Han Iesus Christez veztituz eta haren Spiritua recebituz, baldin hartan presentatzen çaizquigun promessac refusatuz gure buruac indigne eguin ezpaditzagu.

*Ministrea.*

GVc gure alderic cer eguin behar dugu, eguiazqui Baptismoaz vsatzecotz? *50. Igãdea.*

H. Eguiazqui Baptismoaz vsatzeco formá, fedean da eta penitentián: erran nahi dut, segur içan behar garela, ecen gure puritate spirituala Christen odolean dugula, gueuroc baithan senditzen dugularic, eta obraz gure hurcoey declaratzen drauegularic, ecen Christen Spiritua gutan habitatzen dela, gure guthicién mortificatzeco eta Iaincoaren vorondateari iarreiqui eraciteco.

M. Baptismoan gauça horiac necessario diradenaz gueroz, nolaz batheyatzen ditugu haour chipiac. *Haour chipién Baptismoaz.*

H. Ezta bethi necessario fedea eta penitentiá Baptismoan diraden: baina haur aditzen da solament adinetaco eta capable diradenéz. Bada, asco date haour chipiectan baldin eçagutzetara eta adinetara datocenean, bere Baptismoaren fructuac eracuts baditzate.

M. Nolatan eracuts eçaque erraiten duan horretan inconuenientic eztela?

H. Gauça claroa da, Moysesec eta Propheta guciéc declaratzen duten beçala, ecen Circoncisionea-ere, penitentiazco Sacramendubat cela: bay eta fedezco Sacramendu, S. Paulec dioen beçala: guciagatic-ere badacussagu Iaincoac eztituela haourrac hartaric iraitzi vkan. *Deut. 10. 16. eta 30. 6. Ierem. 4. 4 Rom. 4. 11.*

M. Baina haourrén Baptismora eta Circoncisionera re-

cebitzea raçoin berbat da?

*Israeleco populuari eguin promessac gucietara hedatzen.*

H. Raçoin-bat bera: ecen Iaincoac Israeleco populuari lehenago eguin cerautzan promes berac, dirade orain mundu orotara çabalduac eta publicatuac.

M. Baina asco da horretaric cócluditzeco ecen signoaz vsatu behar dugula?

H. Gauçá vngui piçá eta cõsidera deçanac, hala eridenê du. Ecen Iesus Christec ezgaitu Israeleco populuari eman içan çayón gratián participant eguin, hura orain gutan orduan cen baino ilhunago edo hertago deçançat: baina aitzitic clarotuago eta frangatuago draucu hura.

M. Eta vste duc baldin Baptismoa haour chipiey emaiten ezpaguendraue, Iaincoaren gratiá hertu liçatela Iesus Christen ethorteaz?

H. Hori gauça claroa da. Ecen signoa edequi baledi (ceinec Iaincoaren misericordiaz testificatzeco, eta promessén confirmatzeco anhitz valio baitu) lehenagocoéc çutén consolatione handiaz gabe guinande.

M. Hic aditzen duc beraz, haour chipién Saluadore declaratzen ceneco promessa, Iaincoac Sacramendu exteriorez hayen gorputzetan ciguilatu nahi vkan duenaren gainean, ezliçatela raçoin Christen ethortearequin fidelec confirmatione eta segurança gutiago lutén, ikussiric ecen lehenagoco promes bera dela egungo egunean-ere, etare claroquiago hura testificatu içan çaicula eta eguinez confirmatu.

H. Eguia da hori. Are guehiago, gauça claroa denaz gueroz ecen Baptismoaren verthutea eta substantiá haourrey appertenitzen çayela, signoa baita eguiá ezpa verthutea baino gutiago, iniuria handia eguin lequidie haourrey, baldin hura denega balequie.

*Haourrac cer cõditionetara batheiatzen.*

M. Cer conditionetara bada batheyatzeco ditugu haourrac?

H. Iaincoaren benedictione fidelén generationeari promettatu içan çayenaren heredero diradela seignaletan eta testimoniagetan: adinetara eta eçagutzetara datocenean, Baptismoaren eguiá eta verthutea, bere probetchua eguin deçaqueten beçala, eçagut deçatençát.

*Ministrea.*

GAtocen orain Cenara. Eta lehenic nahi niquec hiregANIC iaquin, ceric den haren significationea. *51. Igãdea. Cenaz.*

H. Iesus Christ gure Iaunac hura ordenatu vkan du, gu iracats eta segura guençançat, ecen haren gorputzaren eta odolaren communicationeaz gure arimác hatzen diradela, vicitze eternalaren sperançatan.

M. Cergatic Iaunac oguiaz bere gorputza, eta mahatsarnoaz bere odola representatzen draucu?

H. Aditzera eman dieçaguncat ecẽ oguiac vicitze mortal hunetan gure gorputzén hatzeco eta substantiatzeco duen proprietate bera duela haren gorputzac gure arimén spiritualqui hatzeco eta viuificatzeco. Halaber, nola mahatsarnoac-ere guiçona gorputzera dẽ becembatean hatzen, fortificatzen eta alegueratzen baitu, hala harẽ odola-ere dela gure arimén verthutea, refectionea eta alegrançá. *Christec oguiaz bere gorputza eta mahatsarnoaz bere odola representatzen.*

M. Aditzen duc hic, ecen eguiazqui communicatzen eta participatzen dugula Iaunaren gorputzean eta odolean?

H. Nic hala aditzen dut. Ecen gure saluamenduco confidança gucia, harc bere Aitari rendatu vkan draucan obedientian consistitzen denaz gueroz, hura gure baliz beçala aboatzen çaicun becembatean, behar da hura possedi deçagun: ikussiric ecen haren onac eztiradela gure, baldin bera lehenic eman ezpadaquigu. *Gure confidança certan.*

M. Baina etzaicu guri eman bere burua heriotara emã vkan duenean, gu herioaren condemnationetic deliuraturic bere Aitari reconcilia guiençonçat?

H. Hori eguia da. Baina eztugu horrez asco, baldin hura orain recebi ezpadeçagu, haren herioaren eta passionearen fructua eta verthutea gueuroc baithan sendi deçaguncát.

M. Eta recebitzeco manera fedez da?

H. Bay: eta ez solamẽt sinhetsiz ecẽ hura hil eta resuscitatu dela, gu herio eternaletic deliuraturic, vicitze eternala irabaz lieçagũçat: baina are sinhetsiz ecẽ hura gutã habitatzẽ dela, eta burua bere mẽbroequin iũctatua dẽ cõiunctionez eta iunctaduráz iũctatua eta gurequin bat *Christ nola recebitzen dugun.*

eguina dela, coniunctione hunen verthutez bere gratia orotan participant eguin gaitzançat.

*Ministrea.*

*52. Igãdea* ETa communione hori ezta Cenán baicen eguiten?
H. Bay aitzetic: ecen Euangelioaren predicationeaz-ere Christ communicatzen çaicu, S. Paulec dioscun beçala, ecen haren gorputzeco membro garela, haren haraguitic eta haren heçurretaric: berac-ere erraiten draucu, ecé hura dela ogui vicia, céruticgure arimén hatzeagatic iautsi içan dena: eta gu bat garela harequin, hura bere Aitarequin bat den beçala: eta berce hunelacoric asco.

*1. Cor.1.9.* *Ephe.5.30.* *Ioan. 6.35.* *Ioan.17.11*

M. Cer dugu berce gauçaric Sacramenduan, eta cer berce probetchuric ethorten çaicu?
H. Haur bay behinçát: erran den communione haur confirmatzen eta augmentatzen baitzaicu. Ecé eguiazqui Iesus Christ bay Baptismoan, bay Euangelioã communicatzen baçaicu-ere, eztugu ordea osloqui recebitzen, baina partez.

*Oguiazco signoa.*

M. Cer dugu bada sommarioqui oguiazco signoan?
H. Aditzera emaiten çaicu, ecen Iesus Christ gure Iaunaren gorputza, gu Iaincoarequin reconcilia guençançat, behin guregatic sacrificatu içan den beçala, orainere hura bera guri emaiten çaicula, certifica gaitecençat ecen reconciliatione hartan participant garela.

*Mahatsarnoazco signoa.*

M. Cer dugu mahatsarnoazco signoan?
H. Christec, nola behin bere odola issuri vkan baitu gure bekatuén pagamendutan eta gure redemptionearen preciotan, hala hura orain-ere edatera emaiten çaicula, handic guri ethorteco çaicun fructua sendi deçaguncat.

M. Hire repostarén arauez, Iaunaren Cena sainduac haren herio eta passionera bidaltzen guiaitic, hartaco verthutean participa eta communica deçaguncát.
H. Hala da eguia. Ecen orduan eguin eta complitu içan da sacrificio bakoitza eta perpetuala gure redemptionetan. Eta ezta deus guehiagoric, harçaz gaudi gai-

tecen baicen.

M. Beraz Cená eztuc, Iainco Aitari bere Semearen gorputzaz oblatione eguin lequionçát, ordenatu içan. *Cena ez sacrificio.*

M. Ez: ecen officio hura appertenitzen çayonic ezta hura bera baicen, ceren hura baita Sacrificadore eternala. Ecen ezgaitu manatzen haren gorputza offrenda deçagun, baina solament recebi deçagun. *Sacrificadore bakoitza eta eternala Christ. Heb. 5.6 mat. 26. 26*

*Ministrea.*

CErgatic bi signoz vsatzen dugu?

H. Hori Iaunac gure infirmitateagatic eguin vkan du, aditzera eta eçagutzera ligunçát, ecen eztela hura gure arimén vianda solament baina edari-ere badela hura baithan berean gure içate eta hacitze spiritual gucia bilha deçagunçat, eta ez bercetan. *53. Igandea. Signo doblea gure infirmitateagatic.*

M. Guciéc bardinzqui vsatu behar dugu copaco bigarren signo hunez?

H. Bay: Iesus Christen manamenduaren araura, ceinen contra neholetan-ere ioaitea ezpaita sori.

M. Cenán ala dugu simplequi erran diraden gaucén testimoniagea, ala eguiazqui eta realqui hartan emaiten çaizquigu hec?

H. Iesus Christ gure Iauna eguia bera denaren gainean, ezta dudaric, Cenán eguiten drauzquigun promessac complitzen-ere eztituen, eta figuratzen draucuna, verificatzen. Bada, nic eztut dudatzen, hitzez eta signoz testificatzé draucun beçala, eguinez-ere bere substantia proprian participant eguiten, ezgaituen, berequin vicitzeco vni eta bat eguin gaitzançat. *Eguia da figurarequin.*

M. Baina hori nolatan eguin ahal daite, Iesus Christen gorputza ceruan, eta gu oraino iragaitzez beçala lur hunetan garenaz gueroz?

H. Hori eguiten du bere Spirituaren verthute miraculoso eta comprehendi ecin daitenaz, ceinec lekuz separatuac diraden gauçác bat eguiten baititu. *Christ nola Cenán recebitzen.*

M. Beraz hic eztuc aditzen gorputza oguian barna dela, ez odola mahatsarnoan.

H. Ez: baina aitzitic cótrariora, baldin signoén eguiáz Sacramenduan gauditu nahi bagara, goiti cerura gure *Sacramenduetaco eguia nola vkaiteco.*

bihotzac altchatu behar ditugu, non baita Iesus Christ bere Aitaren glorián, eta nondic ethorteco baita, beguira -ere gauden beçala, gure redemptionetan: eta alfer bilha ahal gueneçaque element corruptible hautan.

M. Beraz hic aditzen duc ecen Sacramendu hunetan bi gauça diradela: ogui eta mahatsarno material ikusté, hunquitzen eta goçatzen ditugunac: eta Iesus Christ Iauna, ceinez gure arimác interiorqui hatzen baitirade.

H. Eguia da: etare hambatetarano non gure gorputzén resurrectionea-ere hartan, quasi erresac emanic beçala, confirmatzen baitzaieu: hec vicitzeco signoan participant eguiten diraden becembatean.

*Ministrea.*

CEin da Sacramendu hunez eguiazqui vsatzeco forma?

54. Igādea 1. Cor. 11. 28

H. S. Paulec erraiten draucuna: Hartara dathorren baino lehen guiçonac phoroga deçan bere burua.

M. Eta certan bere burua phorogatu behar du?

H. Examina deçan bere burua, eya Iesus Christen eguiazco membro denez.

M. Cer signoz hori eçagut ahal leçaque?

H. Baldin eguiazco fedea eta penitentiá baditu, baldin bere hurcoari eguiazco charitatez on badaritza, eta baldin bihotza gaitzeriztez, rancore eta diuisione orotaric chahu badu.

Christen membro içateco seignalea.

M. Baina fedeac eta charitateac perfect içā behar duté?

H. Bata eta bercea behar dirade içan eguiazco eta ez hypocrisiazco, baina halaço perfectione baten vkaitea, non cer erran eztén, guiçonén artean mundu hunetan gareno ezta eridenen. Eta Cena-ere alfer ordenatu içan çatequeen, baldin guciz perfect diradenac baicen haren recebitzeco capable ezpalirade.

M. Beraz imperfect içanac ezguiaitic empachatzé hartara ioaitetic.

H. Baina contrariora, baldin imperfect ezpaguina, Cená ezlaquidigu deus probetcha: ecen gure imperfectionén eta infirmitatén aiutatan içan behar da hura.

M. Bi Sacramendu hauc eztaude berce finetara beha?

H. Bay: ecen gure professionearen eta Christinotassu-

naren merca-ere badirade : erran nahi dut, ecen heçaz protestatzen eta testificatzen dugula nola Iaincoaren populu eta Christino garén

M. Nolaco edo cer estimatzeco liçate Sacramendu hauçaz vsatu nahi ezluqueena?

H. Ezliçate Christinotan-ere eduquiteco, ecen eztu halaco eracutsi nahi bere burua, hala eguiten duenac, aitzitic Iesus Christ desaboatzen eta vkatzen beçala du.

M. Baina asco da bay bataren eta bay bercearen gure vici gucian behin recebitzea?

H. Baptismoa ezta behingo baicen ordenatu, eta ezta sori behin baicen recebi dadin. Baina Cenaz ezta hala.

M. Eta cer differentia da?

H. Baptismoaz Iaincoac adoptatzen eta recebitzen gaitu bere Eliçara. Eta recebitu gaituen ondoan Cenáz testificatzen eta declaratzen draucu, ecen bethiere haci nahi gaituala. *Ministrea.*

*Cergatic Baptismoa behin eta Cena anhitzetan recebitzen.*

*55. Igandea*

NOri eman çayo Batheyatzea eta Cenaren administratzea?

H. Eliçán iracasteco cargu publicoa duteney. Ecen elkarri datchetza, hitzaren predicationea eta Sacramenduén administrationea.

*Batheyatzea eta Cenaren administratzea nori emán.*

M. Scripturaz hori eracuts ahal ecaque?

H. Bay errachqui-ere. ecen gure Iaunac batheyatzeco cargua, specialqui bere Apostoluey eman vkan cerauen, hitzaren predicatzecoa beçala: eta Cenaren administrationean, haren exempluari garreitzan manatu gaitu. Eta declaratzen draucute Euangelistéc, ecen Cenaren distribuitzeã berac ministre publicoaren officioa eguin vkan duela.

*Matth. 28. 19*

M. Baina Sacramenduén dispensatzeco eta administratzeco cargua duten Ministréc, discretioneric batre gabe, recebitzeco dituzte hartacotzat presentatzen diraden guciac?

H. Baptismoaz den becembateã cerẽ haourrey baicen egũgo egunean ezpaitzaye hura administratzen, hartan discretioneac eztu lekuric. Baina Cenán gogoatu behar du Ministreac ez emaitera, indigne dela nehorc claroqui eçagutzen duenari.

*Cena nori emaiteco.*

M. Cerenez?

H. Ceren bercela emaitea, Sacramenduaren profanatzea eta desohorarzea baicen ezpailiçate.

M. Bada Iesus Christ Iaunac Iudas recebitu cián, gaichto eta indigne bacen-ere.

*Cenara Iudas cergatic recebitu.*

H. Ceren haren gaichtaqueria oraino estalia eta secretu baitzén, ecen Iesus Christ Iaunac baçaquian-ere, bercéc deus etzaquiten.

M. Cer içanen da bada hypocritez?

H. Ministreac indigne beçala ecin iraitz ditzaque hec: baina iguriqui behar du, Iaunac hayén gaichtaqueria campora deçaqueno.

M. Eta baldin cembeit indigneric eçagutzen badu, edo hala aduertitu içan bada?

H. Eztate hura asco halacoén iraizteco baldin phorogança sufficientic ezpada, eta Eliçaren iugemendua.

M. Beraz horrelacoén gainean behar dic den cerbait gobernamendu eta politia Eliçán.

H. Hala da: baldin Eliçá bide beçala reglatua bada: eta hartacotzat personage deputatuac eta ordenatuac behar dirade, hel ahal litezqueen scandaloén gainean veilla eta gogoa deçatençát: eta halacoéc, capable eta sufficient eridenen eztiradenac, eta Cena saindura Iaincoa desohoratu gabe, eta fidelac scandalizatu gabe ecin recebi daitezquenac, iraitz ditzaten.

Catechismearen fina.



*IESVS CHRIST GVRE IAVnaren Euangelioco puritatearen araura vicitzeco desira duten Francesec.*

REGVERI.

IAincoari esquer eta laudorio draucagu, Iauna ceren Euangelioco doctrinari eta gure cóscientietan baquez içateari iarreiqui nahiz eguin eta ordinarioqui eguiten çaizquigun persecutionezco gogorgoaren çure Maiestateari aditzera emaiteco lekuric oraindrano ez vkanic orain eracusten baitraucu ordu haur, ceinetan placer baituçu gure gauçaren merecimendua aditu, aurthen 1559. Martchoan Amboisen emanic, çure Maiestateac publica eraci duen Edictaren araura. Raçoin hunegatic, çure officierez gureganaco vorõdate gaichtoz lehen ecen ez çuri cerbitzu eguiteco affectionez, guri eguin içan çaicun bidegabearen eta gogorgoaren causaz, oraindrano boçaturic eduquiric, orain ahoen irequitera venturatzen gara. Eta eguiteco huni dauritzan gaucetan complituqui informatua çarençát, gure affectione guciaz othoitz eta supplicamendu eguiten draucugu, Iauna: nahi duçun, othoi, ikussi eta ençun, guc çure Maiestateari presentatzen draucagun gure fedeazco Confessionea: eta sporçu dugu, ecen oraindrano gure causá eçagutu gaberic, bidegabezqui bethi gure condemnatzez berce eguitecoric vkan eztutenéc, gure contra erran dituzten gaizqui eta diffamatione orotaric gure defendagarri eta emparagarri, Confessione haur bera asco içanen dela. Ecen eguiazqui eta frangoqui protesta ahal deçaquegu, Iauna, ecen hemen eztela Iaincoaren hitzaren, ez çure Maiestateari çor draucagun obedientiaren contrataco gauçaric batre: ceren gure fedeco articulu hemen asco luçaqui iarriéc punctu haur baitacarqueite guciéc, Ecen Iaincoac bere Prophetez eta Apostoluez, eta are Iesus Christ bere Seme gure Iaunaren ahoz asco claroqui bere vorondatea declaratu vkan draucunaz gueroz, guc Iaincoaren hitzari ekarteco draucagula halaco ohorebat eta reuerentiabat nõ ezpaitraucagu deus eratchequiteco ez edequiteco: baina-aitzitic hartan chedaturic emaiten çaicun reglari

ossoqui susmettitzeco eta confermatzeco gaitzaitzala. Eta ceren Eliça Romanoac, Eliça primitiuaco manerá eta costumá vtziric, manamendu berriric, eta Iaincoaré cerbitzatzeco manera berriric eçarri vkan baitu, raçoinezco estimatu vkan dugu, eta guciz necessario (guiçonac bere ethortez baititade gueçurti eta vano içatera suiet, eta Iaincoa baita eguia bera) guiçonén manamenduetaric Iaincoaren manamenduéc abantail haur lutén, non, hambat diuersitateren eta differentiaren artean, guiçonenac vtziric, Iaincoareney garreiztén. Eta cerere aihercunde ahal bailuqueite gure contrastéc gure contra, frangoqui Iaincoaren eta gendén aitzinean erran ahal deçaquegu, ecen guc ikusten eta suffritzen dugun gaitz gucia, eztela berce causagatic, lekat ceren Iesus Christ gure Iauna dela, gure Saluadore eta Redemptore bakoitza: eta haren doctriná dela vicitzeco eta saluamendutaco doctrina bakoitza, mantenitzen baitugu baicen. Eta causa haur bera içan da, Iauna, cerengatic çure suiet gaichoen odolean hambat aldiz borreroéc escuac butchatuac vkan baitituzté: eta guiçonéc naturalqui Iaincoaren ohoreaz baino bere aisiáz eta probetchuaz arrangurago dutenaren gainean, erran behar da, Confessione hunen beraren mantenitzeagatic eta on eduquiteagatic bere vicien emaitera dudatu eztuten gaichoac, guiçonén ez berce spirituz incitatuac eta guidatuac içan diradela. Bada Iauna, çuc çure suiet gaichoac baithara vsatzeco promettatzen duçun ontassunaren araura, çure Maiestateari supplicamenduz guiaizquio misericordia eta gratia haur eguin nahi drau cuçun, nó har deçaçun escutã causa huné eguitecoa, ceinagatic ordu eta oren oroz, gu, batean herioz, bercean accotamenduz, bercean berce moldez iarreiquiac eta persecutatuac içanez, çuri çor drauçugun obedientiaren eguiteco moien gucia edequiten baitzaicu. Biz bada, othoi, çure Maiestatearé placera, Iauna, iragan demboretan suz eta marreçanez nehorc vsatu vkan duenaren orde: orain Iaincoaren hitz sainduaz debati eta ireter eraci deçaçun gure Confessione haur, hunetacotzat segurança eta permissione bethea emaiten duçularic.

Eta confidança dugu ecen gure innocentiaren eta hoguen-gabearen iuge çu ceuror içanen çarela, eçaguturic nola eztén hemen eçeinere heresiaric ez rebellioneric : baina guc daramaguna dela, conſcientia ſanotan vici ahal garen, Iaincoa bere manamenduén araura cerbitzatuz, eta çure Maieſtatea obedientia eta ſuiectione orotan ohoratuz. Eta ceren Iaincoaren hitzaren predicationeaz, bay Iaincoaganaco eta bay çureganaco gure eguimbidean retenitu eta eduqui behar baicarade: gure affectione eta ahal guciaz othoitz eta ſupplicamendu eguiten drauçugu Iauna, nahi draucuçun permettitu, cembeit orduz elkargana biltzera cilhegui garen, hambat Iaincoaren hitzaz haren beldurrera exhortatu içatera, nola Ieſus Chriſt gure Iaunac berac bere Eliçán ordenatu dituén Sacramenduéz confermatu içatera. Eta baldin çure Maieſtatearen placera bada, cer gure congregationetan eguiten den, batbederac ikus deçaqueen beçalaco lekuric eman daquigun, ikuſte berac defendaturen gaitu, gure congregationeac diffamatu nahiz aitzinaratu içan diraden enormitatezco eta beilhaqueriazco accuſatione falſuetaric : ceren hetan ezpaitu nehorc modeſtiaric eta honeſtateric baicen ikuſſiren, ez-eta ençunen Iaincoaren laudoriotaco eta harẽ cerbitzuraco exhortationeric, eta çure Maieſtatearen eta çure Reſumaren conſeruationeraco othoitzaric baicen. Eta baldin çure vorondatea ezpada, Iauna, hambat gratia eguin daquigun, nón leku aſſignaturic dugun, ezpere permetti bequigu othoi, ia gure artean iarria den ordenançá, empatchuric gabe continua ahal deçagun. Eta hunen gainean gure affectione eta bihotz guciaz othoitz eta ſupplicamendu eguiten drauçugu Iauna, nahi duçũ othoi eſtimatu, orain preſentatzẽ, çaiçun ſupplicatione haur iracurtzẽ dançuçuneã, ecẽ çure ſuiet contuz eriden ahal leiten baino guehiagoren auhenac eta ſuſpirioac ençuten dituqueçula, othoitzez çure miſericordiác iraungui nahi dituen, çure iugetaric anhitzen crudelitatez çure Reſumaco ſu viztuac : halaz çure Maieſtatea cerbitzatzen dugula, çu dignitate eta handiraſſun horretan eçarri çaituen Iaunaren cerbi-

tzatzera haiçu garençat. Eta baldin gure minçoari behatu nahi ezpaçaizquió, beha çaquizquio Iaincoaré Semearenari, ceinec gure onén, gorputzén eta vicien-ere gainean puissança çuri emanic, galdeguiten baitrauçu, gure arima bere odolaz erossien gaineco puissançá eta iaurgoá hari reserua eta lekat daquión. Hambatequin, hari berari othoitz eguiten draucagu Iauna, çure adinarequin çure handirassuna eta puissançá emendatuz, çure etsay ororen gainean victoria emanez, eguimbide eta iustitia orotan bethi çure Maiestatearen thronoa confirmatuz, bere Spirituaz ardura goberna eta guida çaitzala: eta guri-ere harc berac çure aitzinean gratia eriden eraci dieçagula othoi çerbait emendio gure supplicatione hunetaric sendi ahal deçagun, gure penac eta afflictioneac cerbait passutara eta libertatera behin-behin cambiaturic, gure nigar vriac-ere cambia ahal ditzagun bethi esquer eta laudorio emaite batetara, lehenic Iaincoari eta guero çure Maiestateari, ceren halaz eguin duqueçun haren voron date sainduari eta çure ontassunari eta eguimbideari dagocan beçala, bay-eta çure suiet eta cerbitzari gaichoén conseruationera guciz behar eta necessario dena.

# IESVS CHRIST GVRE IAVNAREN EVANGELIOCO DOctrina puraren araura vicitzeco desira duten Francesec consentimendu commun batez berén fedeaz eguin duten confessionea.

1 GVc dugu sinhestén eta eçagutzen * Iaincobat bera dela, eta hura essentia bakoitz-bat bera, * spiritual, * eternal, * inuisible, muthatzen eztena, * infinito, comprehendi ez erran ecin daitena, * bothere gucitaco, * guciz çuhur, * guciz on, * guciz iusto, * eta guciz misericordioso.

2 Eta Iaincobat ber haur, guiçoney çaye hunelaco manifestatzen eta eracusten, * lehenic bere obré creatzeaz, conseruatzeaz, eta gobernatzeaz. * Berçalde are claroquiago, bere hitzaz: eta hitz haur manifestatu vkan du lehenic * visionez eta reuelationez: eta guero nahi vkan du liburutan * scribuz iar ledin, eta liburu hauc * ditugu deitzen Scriptura saindu.

3 Eta Scriptura saindu haur gucia contenitzen da Testamentu çaharreco eta berrico liburu canonicotan, eta hayen contua da haur. Moysesen borz liburuac dirade, Genesioa, Exodoa, Leuiticoa, Nombreac, Deuteronomea: guero, Iosué, Iugeác, Ruth, Samuelenic bi liburu. Reguenic bi liburu. Chronico edo Paralipomenon deitzen diradenic, bi liburu. Esdrasen lehen liburua: guero Nehemias, Esther, Iob, Dauid-en Psalmuac, Salomoné Prouerbioac, Ecclesiastea, Salomonen Canticoa, Esaias, Ieremias, Ieremiasen Lamentationeac, Ezechiel, Daniel: guero hamabi Propheta chipiac, baitirade, Oseas, Ioel, Amos, Abdias, Ionas, Micheas, Nahum, Abacuc, Sophonias, Aggeo, Zacharias, Malachias: guero Iesus Christen Euangelio saindua, S. Mattheuen araura, S. Marc-en araura, S. Luc-en araura, S. Ioannen araura. Apostoluén Acteac: guero S. Paulen Epistolác, Romanoetara bat Corinthianoetara biga. Galatianoetara bat,

*Deu.4.35 eta 39
1.cor.8 4 eta 6
1.cor.8.4,6
* Gen.1.3
ioan.4. 24,
2.cor.3.17
*Exo.3.15, 16.18
* Rō. 1.20
1.tim.1.17
*Mala.3.6
* Rom. 11. 33
act.17. 24, eta.7.48
* Ierem.10. 7.eta 10
luc.1.37
Rō. 16.27
* Mat. 19. 17
* Iere. 12.1
* Exo. 34. 6, eta 7
* Rō.1. 19
* Heb.1.1
* Gen.15.1
* Exod.24. 3, eta 4
* Rom. 1.8

Ephesianoetara bat, Philippianoetara bat, Colossianoetara bat, Thessaloniceanoetara biga, Timotheogana biga, Titegana bat, Philemongana bat: guero Hebraicoetaraco Epistolá: S. Iaquesen Epistolá: S. Pierrisen bi Epistolác: S. Ioannen hirur Epistolác: S. Iudaren Epistolá: S. Ioannen Apocalypsea edo Reuelationea.

*Psal. 19. 8, eta 9 psal. 12. 7

4. Liburu hauc eçagutzen ditugu Canonico, eta * gure fedearé eguiazco regla dadutzagu, eta haur ez Eliçaren consentimendu batgatic ber, baina vnguiz areago Spiritu sainduaren testimoniage, eta barnetico segurança eguiazco batgatic, ceinec liburu hauc discerni eta berez eraciten baitrauzquigu berce liburu Ecclesiasticoetaric, cein probetchable içanagatic, ez paitirade ordea halaco non hetaric fedeco articuluric batre funda ahal dadin.

*2. Tim. 3. 15. eta 16 2 pier. 1. 21 *Ioan. 3. 31 eta 34 ioan. 5. 34 1. tim. 1. 15 *Ioan. 15. 11 act. 20 27 *Deut. 4. 2 eta 12. 32 galat. 1. 8 apoc. 22. 18 19 *Mat. 15. 9 act. 5. 28. 29 *1. Cor. 11. 1, 2: eta 23

5 Guc dugu sinhesten ecen erran den liburu hautaco * hitza Iaincoaganicoa dela eta * harenganic beraganic duela bere authoritatea eta ez guiçonetaric. * Eta nola hitz hura baita eguia ororen reglá, contenitzen duelaric Iaincoaren cerbitzuco eta gure saluamendutaco neceßario den gucia, diogu ecen * eztela sori guiçonén ez are Ainguerién-ere hitz hari deusen eratchequitea, edequitea edo cambiatzea. Hunec dacarque ecen ez * antiquitateric, ez costumaric, ez gende anhitzic, ez guiçonén çuhurtaßunic, ez iugemenduric, ez arrestic, ez edictic, ez decretic, ez concilioric, ez reuelationeric, ez miracaluric batre etzayola Scriptura diogun huni neholetan-ere, ez deusetan-ere contrariatzeco, * baina aitzitic hunen araura behar diradela Christinotaßuneco punctu guciac examinatu, reglatu eta reformatu. Eta hunen tenorez guc ditugu laudatzen eta aboatzen hirur Symboloac, da iaquiteco, Apostolicoa, Nicenoa, eta Athanasiorena, ceren Iaincoaren hitzarequin conforme baitirade.

*Deut. 4. 12 mat. 28. 19 1. ioan. 5. 7 ioan. 1. 1. *Ioan. 1. 1 ioan. 17. 5 act. 17. 25 rom. 1. 1

6 Scriptura saindu hunec * iracasten gaitu, ecen essentia diuinal bakoitz eta ber erran dugun hunetan, diradela hirur persona, Aita, Semea eta Spiritu sainduа. Aita, lehen causa eta gauça gucién lehen originea eta fundamenta: * Semea, haren hitz eta sapientia eternala: Spiritu sainduа, haren beraren verthutea, potentiá eta effi-

cacioa.Semea eternalqui engendratu içan da Aitaganic.Spiritu saindua eternalqui proceditzen da Aitaganic eta Semeaganic:eta hirur persona hauc eztirade cõfus,baina cein bere:ez ordea separatuac,baina essentia, eternitate,puissança,eta equalitate batetaco.Eta mysterio hunetan approbatzen eta aboatzen dugu Concilio çaharréz determinatu içan dena: eta doctor saindu ancianoéz,hala nola,Athanasioz,Hilarioz,Cyrilloz,Ambrosioz,eta bercez,Iaincoaren hitzaren verthutez iraitzi içan diraden secta eta heresia guciac ditugu detestatzen eta abhorritzen.

7 Guc dugu sinhesten * ecen Trinitateco hirur personéc elkarrequin batean obratzen çutelaric, Iaincoac bere bothere, sapientia eta ontassun incomprehensibleaz creatu vkan dituela gauça guciac,eta ez solament cerua eta lurra eta hetango gucia, baina spiritu inuisibleac-ere bay :* eta hetaric batzu erori içã diradela, perditionetara: * eta bercéc obedientián persistitu eta iraun vkan dutela. Eta diogu * eroriac, nola malitiatan corrumpituac baitirade diradela vngui ororen, bayeta Eliça guciaren etsay : eta berceac, Iaincoaren gratiaz preseruatu eta beguiratu içanic, * diradela Iaincoaren icenaren gloriatan eta elegituén saluamendutan emplegatu içateco Ministre.

* Gen.1.1 ioan.1.3 iuda.6. colos.1.16 heb.1.2.eta 14
* 2. Pier.2.4
* Psal.103. 20,21
* Ioan.8.44
* Heb.1.7. 8

8 Guc dugu sinhesten ecen * Iaincoac eztituela solament creatu vkan gauça guciac,baina regitzen eta gobernatzen-ere badituela,* munduan guerthatzen den gauça gucia bere vorondatera dispausatuz eta ordenatuz:* ez ordea gaitzaren author den, ez hoguendun ahal daten, * ceren haren vorondatea baita çucen eta eguimbide ororen regla subiranoa eta eguiazcoa:* baina haren moienac dirade hambat miraculuzco, non deabruéz eta gaichtoéz hala cerbitzatzen baita,non baitaqui hec eguiten dutén eta hec hoguendun diraden gaizquiaren onera conuertitzen. * Eta confessatzen dugunean ecen deus eztela eguiten Iaincoaren prouidentiá gabe:guc ditugu humilitaterequin adoratzen haren secretu guri estaliac,gure capacitateac emaiten duen baino aitzinago inquiritzen ezgarelaric,baina applicatzen

* Psal.104
* Prouer.16.4
mat.10.29
rom.9.11
act.17.24 eta 26.28
* Oseaz.13.9
1.ioã.2.16
1.ioan.3.8
* Psal.5.5 eta 119
ioã.1.22
* Act.2.23 eta 4.27
* Rõ.9.19, 20
rom.11.33

duguláric gure probetchutara Scriptura ſainduan eracuſten çaicun gucia, repoſetan eta ſegurançatan garençat * ceré gauça guciac bere ſuiectionean dituen Iaincoac, aitataſſunezco artha batez veillatzen baitu gure gainean halaco maneraz non ezpaita bilobat-ere gure burutic eroriren haré vorondatea gabe:* eta bizquitartean deabruac eta gure etſay guciac hala dadutza bridatuac, non calteric batre ecin baitaidigute haren congitarequin baicen.

* Mat. 10. 30 luc. 21. 18
* Iob. 1. 1 gen. 3. 15

9 Guc dugu ſinheſten ecen * guiçona chahu eta complitu, eta Iaincoaren imaginaren conforme creatu içanic, recebitu çuen gratiatic bere falta propriz erori içan dela,* eta halatán Iaincoaganic (cein baita iuſtitia eta ontaſſun ororen ithur burua) alienatu içan da halaco maneraz, non haren naturá choil corrumpitu içan baita: eta bere ſpirituan itſuturic eta bere bihotzean gaichtaturic, galdu vkan du integritate eta perfectione gucia, batre libertu ez gueldituen gabe.* Eta harc vkanagatic onaren eta gaitzaren gainean cerbait diſcretione,* badaric-ere guc dugu erraiten ecen harc bere ethortez ahal luqueen claretatea ilhumbetara conuertitzen dela. Iaincoaren bilhatzeaz queſtione denean: halaco maneraz non bere adimenduz ez raçoinez neholetan-ere harengana ecin hurbil baitaite.* Eta vkanagatic edocein gauçaren eguiteco vorondatebat, guciagatic-eré vorondate hura dela diogu hala bekatuaren azpian gathibatuac non Iaincoac emaiten draucan libertateaz berceric ezpaitu.

* Gen. 1. 26 eccle. 7. 30 rom. 5. 12 ephe. 2. 2, eta 3
* Gen. 6. 5 eta 8. 21
* Rom. 1. 21 eta 2. 18, 19. 20
* 1 Cor. 2. 14
* Ioan. 3. 6, eta 8. 36 rom. 7. 16, eta 8. 6, 7 1. cor. 4. 7
* Gen. 8. 21

10 Guc dugu ſinheſten ecen* Adamé leinu gucia kotſu hunez kotſatu içan delá, cein baita bekatu originala, baita atchaquio heretagezcobat, eta ez ſolament imitationezcobat Pelagianoéc erran nahi vkan duten beçala: eta halacotz hec ditugu abhorritzen, eta dadutzagu deteſtationetan bere erroretan. Eta eztugu eſtimatzen inquiritu mengoaric dela, nola eta cer moldez bekatua guiçon batetic berceratzen den: ikuſſiric ecen aſco dela iaquitea, ecen Iaincoac Adami eman vkan ceraucana, etzela haren daco ber, baina haren leinu guciaren-ere: hala nola gu haren perſonán ontaſſun oroz billuciric

rom. 5. 12, 18 iob. 14. 4

eta gabeturic paubrecia eta malediƈtione gucitara tre-bucatu eta erori içan baicara.

11 Guc dugu halaber ſinheſten ecen atchaquio haur dela eguiazqui bekatu,eta halaco non * leinu humano guciaren bayeta haour chipien-ere,amén ſabeleandanic condemnatzeco aſco, eta halacotan eſtimatzen dela Iaincoaren aitzinean: * etare batheyatu ondoan-ere, bethi dela bekatu, hoguenaz den becembatean, con-demnationea Iaincoaren haourretan abolitu eta ira-ungui içanagatic,ceren harc bere ontaſſun gratiazcoa-gatic ezpaitraue bekatua imputatzen ez contatzen. Eta guehiago,* ecen atchaquio hura dela halaco condi-tionetaco, non bethiere gaichtaqueriataco eta deſobe-dientiataco fruƈturic eguité baitu:halaco maneraz * nõ diraden ſainduenec-ere,hari reſiſtitzen eta bihurtzen enſeyatzen baçaizquio-ere infirmitatez eta faltaz at-chaquiatu içatea mundu hunetan diradeno ezpaitute vtziten.

* Pſal.51.7 rom.3.9, 10,11,12, 13.eta 5. 12,18
* Rom.7
* Rom.7.5
* Rom.7. 18,19 2.cor.12.7

12 Guc dugu ſinheſten ecen guiçon guciac hatzaman eta hundatu içan diraden corruptione eta condemna-tione hunetaric, retiratzen eta deliuratzen dituela * Iaincoac bere ontaſſunagatic eta miſericordia-gatic bere conſeillu eternalean eta cambiatzen eztenean, conſiderationeric, batre hayen obretara vkan gabe, Ieſus Chriſt gure Iaunean elegitu vkan dituenac, eta hura bera baithan vicitze eternaleco herederotan a-doptatu vkan dituenac : * berceac corruptione eta condemnatione hartan berean vtziten dituela, hau-tan bere iuſtitiá eracuts deçançat, lehenetan bere mi-ſericordiaren abundantia beçala . Ecen bere ethor-tez batac eztirade berceac baino hobe, Iaincoac mun-duaren creationea baino lehen, bere conſeillu eternal Ieſus Chriſt baithan determinatu çuenaren araura diſ-cerni eta berez ditzaqueno . Eta nehor halaber bere verthutez ontaſſun handi hunetan ecin partici-pant eguin daite : * ceren gure naturaz higuitze ez affeƈtione ez penſamendubat-ere onic ecin baituquegu, Iaincoac behin hartara preueni, eta diſpauſa gaitza-queno.

* Exo.9.16 rom.9.22 2.tim.2. 20 eph.1.7
* Rom.3. 22,23 eph.1 4 2.tim.1.9 tit.3.5.7
* Iere.10. 23 eph.1.4.5

13 Guc dugu sinhesten ecen gure saluamenducotzat behar eta necessario guenduen gucia emaiten eta communicatzen çaicula Iesus Christ Iaunean eta bere burua gure saluamendutã emanic,* hura eguin içã çaicula gure sapiẽtia, iustitia, sanctificatione eta redẽptione: halaco maneraz non harenganic aldaratzen denac Iainco Aitaren misericordiaz, gure itzurtbide eta refugio bakoitzaz renuntiatzen eta arnegatzen baituque.

*1.Cor.1. 30 eph.1.6.7 col.1.13,14 tit.2.14

14 Guc dugu sinhesten ecen Iesus Christ, Iaincoaren sapientia eta * Seme eternal celaric, veztitu içan dela gure haraguiz, persona batetan licençát Iainco eta guiçon,* gure irudico, gorputzetan eta arimatan suffri ahal leçaqueen beçalaco, salbu macula gucitaric chahu eta pur içan baita. * Eta haren humanitateaz den becembatean hura içan dela eguiazco Abrahamen eta Dauid-en hacia: * Spiritu sainduaren verthute mysteriozcoz concebitu içan bada-ere. Eta hunetan aborritzen eta iraizten ditugu ancianoqui Eliçác trublatu dituzten heresia guciac: gucién gainetic Serueten imaginatione deabruqueriazcoac, ceinec attribuitzen baitrauca Iesus Iaunari diuinitate fantasiazcobat, ceren hura den gauça ororen idea eta patroina: eta hura du deitzen Iaincoaren Seme personala, edo significationezcoa: finalqui, hirur element creatu gabericoz eguin içan den gorputzbat forgeatzen drauca, eta ditu nahastecatzen eta deseguiten bi naturác.

*Ioã.1.14 philip.2.6 *Heb.2.17 2.cor.5.21 *Act.13. 23 rom.1.3, eta 8.3, eta 9.5 2.cor.5.21 philip.2.7 heb.2.14, 15 *Mat.1. 18 luc.1.35

15 Guc dugu sinhesten ecen * Iesus Christen persona batetan berean, bi naturác eguiazqui eta separa ecin daitezqueen beçala diradela iunctatuac eta bat eguinac, ordea bi naturetaric batbedera dagoelaric cein bere proprietatean, halaco maneraz non, hala nola conionctione eta battassun hunetan, natura diuinoa bere proprietate bera eduquiten duelaric libertu eta azquendu içan baita creatione gabe, infinito, eta gauça guciac bethatzen dituelaric, * halaber natura humanoa libertu eta gueldítu içan da finito, bere formá duelaric, neurria eta proprietatea: etare Iesus Christec bere resurrectionean bere gorputzari immortalitate eman vkan badrauca-ere, eztrauca halacotz edequi vkã bere naturaré eguiá. Bada guc dugu hura hala cõsidera-

*Mat.1. 20 luc.1.31, 32.35.41. 42 ioan.1.14 rom.9.5 1.tim.2.5 eta 3.16. heb.5.8 *Luc.24. 38,39 rom.1.4 philip.2

tzen bere natura diuinoan, non ezpaitugu bere humanitateaz billutzen.

16 Guc dugu ſinheſten * ecen Iaincoac bere Semearen igorteaz bere gureganaco amorio eta ontaſſun ineſtimablea eracutſi vkan duela, harc herio iraganic, reſuſcitaturic eta iuſtitia gucia compliituric vicitze celeſtiala acquiſi eta irabaz lieçagunçat.

*Ioã. 3.16, eta 15.13. 1. ioan. 4.9

17 Guc dugu ſinheſten * ecen Ieſus Chriſt gure Iaunac crutzean oſtrendatu vkan duen ſacrificio bakoitzaz reconciliatu eta baquetu içan garela Iaincoarequin, haré aitzinean * iuſto eſtima eta recebi gaitecençát: ecen gu haren gogaraco, ez haren adoptionean participant ecin garate, bekatuac barkatzen eta ohortziten drauzquigun becembatean baicen. * Bada guc dugu proteſtatzen eta declaratzen ecen Ieſus Chriſt dela gure ikuzgarri complitua eta perfectoa, eta haren herioan dugula, gu hoguendun garen falta eta iniquitate gucién ſatisfactione oſſoa eta complitua: eta berce remedioz batez-ere ecin deliura ez empara ahal gaitezquela.

*2. cor. 5.19 heb. 5.7, 8.9 eta 9 * 1. pier. 2. 24, 25 * Eph. 5.26 tit. 3.5 heb. 9.14 1. pier. 1.18 19 1. ioan. 1.7 * Pſal. 32. 1, 2 1. ioan. 17. 23 rom. 4. 7, 8 2. cor 5.19 * Rõ. 5.19 2. tim. 2.5 act. 4.12 1. ioan. 2. 1, 2

18 Guc dugu ſinheſten, * Dauid-ec dioen beçala, ecen gure iuſto içatearen eta dohainontaſſunaren fundament gucia dela fundatua gure bekatuén barkamenduan. * Cauſa hunegatic, Iaincoaren aitzinean gure iuſtificatzeco, huneçaz berce moien guciac guc ditugu abhorritzen eta deteſtatzén: eta eceinere berce verthutez ez merituz deus preſumitzen eztugularic Ieſus Chriſtec eguin duen obedientián, ſimplequi gueldítzen eta arraſtatzen gara, cein imputatzen eta contatzen baitzaicu, hambat gure bekatu guciez barkamendu vkaiteco, nola Iaincoaren aitzinean fauore eriden eraciteco. Eta eguiazqui dugu ſinheſten ecen baldin fundament hunetaric den gutiena-ere aldara baguintez, bercetan repoſic ecin eridenez, guinandela baramenduric batre gabe gure bihotzetan hara huna erabiliac: ceren ſeculan ecin baquez baiquinande Iaincoarequin, Ieſus Chriſten amorez miſericordiatan recebituac eta onhetſiac garela ſegura gaitezqueno, nola gure ethortez gaitzeriztéric eta condemnationeric baicen ezpaitugu mereci.

19 Guc dugu ſinheſten * ecen moien hunez beraz dugula, gure Aita eracutſiren delaco confidança betherequin, Iaincoaren inuocatzeco libertate eta priuilegio. Ecen ezguenduque acceſſic ez ſartzeric batre Iainco Aitagana, Ararteco hunegana buru eguin ezpagueneça: eta hunen iceneã ençũ içatecotz, hunenganic gure vicia eduqui behar dugu, gure eguiazco buruaganic beçala.

20 Guc dugu ſinheſten * ecen iuſtitia eta gratia hunetan participant garela fede hutſez, nola erraiten-ere baita, ecen ſuffritu vkan duela guri ſaluamendua irabaz lieçagunçat, hura baithan ſinheſten duenic gal eztadinçat: * eta haur eguiten da, ceren vicitze eternalaren vkaiteco hura baithan emaiten çaizquigun promeſſac applicatzen baitirade gure probetchutara: eta ſenditzen dugu hayen indarra hec acceptatzen ditugunean, dudatzen eztugularic ecen Iaincoaren ahoz ſeguratuac garenaz gueroz, ezgarela enganatuac içanen. * Bada fedez obtenitzen dugun iuſtitia haur, dependitzen da Iaincoac on darizcula declaratzen eta teſtificatzen draucun promes gratiazcoetaric.

21 Guc dugu ſinheſten * ecen fedean Spiritu ſainduaren gratia ſecretuz illuminatzen garela, halaco maneraz non hura baitá Iaincoac placer dueney emaiten drauen dohain gratiazcobat eta particularbat: hala non fidelec ezpaitute cerçaz glorifica ditecen, baina dirade obligatuagoac, ceren bercetaric abantail preferitu içan diraden: * eta etzaye elegituey fedea emaiten behin bide onean eçarteco ſolament: baina finerano hartan continua eraciteco-ere bay: * ecen hatſea beçala acabatzea-ere Iaincoari appertenitzen çayó.

22 Guc dugu ſinheſten * ecen fede hunez beraz vicitze berritara regeneratzen garela, naturalqui bekatuaren ſclabo garenaren gainean. Bada ſainduqui eta Iaincoaren beldurrean vicitzeco gratiá fedez recebitzen dugu, Euãgelioaz emaité çaicũ promeſſa recebituz, cein baita ecé Iaincoac emané draucula bere Spiritu ſaindua. * Bada hãbat falta da fedeac vngui eguitetic hotzé edo harçaratzé gaitué, nõ gure obra on guciac harc eguité baititu gutan, fructuac arboretic hel du diraden moldera

*Rom.8.15 ga.4.4.5.6.7 rom.3.21, 24.27.eta 4.3, 26:eta 9.31, 32:eta 11.6 *Ioan.3.15 gal.2.16, 21:eta.3.9, 10, 18: 24. eta 5.4 philip.3.9 2.tim.1.9 tit.3.5 heb.11.7 *Mat.17.20 ioan.3.16, etá 17.10, 20.21 *Rõ.1.17; eta 3.24, 25:28.30, eta 4 gal.2 *Eph.2.8 1.theſſ.1.5 1.cor.2.12 2.pier.1.3, 4 *1.Co.1.8, 9 *Philip.1.6 eta 2.13 *Rõ.6.17, 18.19.20 coloſ.2.13, eta 3.10 1.pier.1.3 *Iac.2.17, 26 gal.5.6 1.ioã.2.3, 4: eta 5.18

* Gaineracoaz, Iaincoac cõplituqui ſalua gaitzançát re-generatzé eta ſainduqui vicitzera reformatzen bagaitu-ere: * guc dugu cõfeſſatzé ecé haré Spirituaré guidamé-duz eguité ditugũ obra onac eztiradela cõtutara ethor-tén hec gu iuſtifica gaitzatécát, edo Iaincoac bere haour-retan eduqui gaitzan merita dieçagutençát: ceren be-thiere baiquinãde dudatã eta ſoſſagu gabe, baldin Chri-ſtec quitto eguin gaituen ſatisfactionean gure conſcien-tiác repoſatzen eta ſoſſegatzen ezpalirade.

*Deut.30.6. ioan.3.5. Pſal.16.2. luc 17.10. rom.3. eta 4.3.4.5 tit.3.5.*

23 Guc dugu ſinheſten * ecen Legueco figura guciéc fin hartu vkan dutela, Ieſus Chriſten ethortearequin: baina ceremoniác guehiagoric vſagetan eta coſtumatan ez içanagatic, complimendu gucia duenaren perſonán libertzen eta gueldítzen çaicu ceremonietaco ſubſtãtiá eta eguiá. * Gaineracoaz, hambat gure vicitzearen re-glatzeco, nola Euãgelioco gauçác aitzinetic promet-tatuac ciradela iaquiteco eta hayen confermatzeco, Le-gueaz eta Prophetéz aiutatu eta cerbitzatu behar gara.

*Rom.10.4. gal.3. eta 4. col.2.17. *2.tim.3.16. 2.pier.1.19 eta 3.2.*

24 Guc dugu ſinheſten * ecen gure Aduocat eta arar-teco bakoitzetan Ieſus Chriſt eman içan çaicunaz gue-roz, * eta harc berac haren icenean frangoqui Aitagana retira gaitecen manatzen gaituenaren gainean: * etare ceren ezpaitzaicu permettitzen othoitzeric daguigun Iaincoac bere hitz ſainduan ordenatu eta eman drau-cun formán baicé, diogu bada, guc dugula ſinheſten * e-cen guiçonéc Saindu hilén interceſſioneaz den becem-batean imaginatu dutén gucia eztela abuſubat eta en-ganiobat baicen, othoitz eguiteco eguiazco formatic nehoren erauz eta aldaragarri baicen. Eta halaber guc ditugu abhorritzen eta iraizten, Ieſus Chriſtéc bere he-rioaz eta paſſioneaz eguin duen ſacrificioaren mendre-çale eta ezeztaçale beçala, guiçonéc bere buruën Iain-coa baithan redemitzeco preſumitzen dituztén berce moién guciac. Guehiago guc daducagu ecen Purgato-rioa dela eceinere Scripturataco fundamentic gabe eri-theitzebat, illuſionezco eta enganiozco botiga beretic ilkia. * Eta hartaric beretic ilki içan dirade fraide eta ſe-rora içateco, bay eta ſaindoren edo veillara ioaiteco vot eta promes guciac: berçalde, ezconçaren eta viandén

*1.Tim.2.5. act.4.12. 1.ioã.2.1,2 Ioan.16.23.24. *Mat.6.9. luc 11.2. 1.ioan.2.1. *Act.10.25.26. eta 14.14. apoc.19.10 *Mat.15.11. act.10.14.15. rom.14. gal.4.9.10 col.2.18.19 23. tim.4.2.3.4.5.*

defensionea, egun iaquinen obseruatzeco ceremonia, confessione auricularа, iubileu, perdonāça eta generalqui barkamendu eta saluamendu meritatu vstezco bercé manera gucia. Eta hauc eta hunelaco berce guciac ditugu arbuyatzen eta iraizten, ez solament hetango meritutaco opinione falsuagatic: baina ceren conscientién carcagarritaco inuentione guiçonéz ordenatuac diraden-ere bay.

*Rom. 1. 16.17. eta 10. *Mat. 18. 20. eph. 1 22. 23. *Mat. 10. 40. luc 10.16. ioan. 13.20 rom. 10.

25 Eta * ceren mundu hunetan ezpaicara gauditzen Iesus Christen presentiáz Euangelioaren moienez baicen, * guc dugu sinhesten ecen haren authoritatez Eliçán ordenatu eta iarri içan den disciplina saindu qui eta fermuqui beguiratu behar dela. Bada Eliçá ecin consisti daite, baldin hartan iracasteco cargua duqueiten pastorac ezpadirade: * eta hec bidezqui deithuac diradenean, eta fidelqui bere officioa eguiten duqueiten orduan, ohoratu eta reuerentiarequin ençun behar dirate. Eta haur ezta ordenatu içan, Iaincoa hunelaco aiutaré ezpa moien bacho hauen suiet ez behar delacotz, baina ceren hunelaco bridaren azpian eduqui eta entretenitu nahi baiquaitu. Eta hunetan guc ditugu abhorritzen, hetan den becembatean, Iaincoaren hitzaren predicationea eta haren arauezco Sacramēduén administrationea empatchatu eta deseguin nahi duten fantasiaçu guciac.

*Psal. 5.8. eta 22.23. eta 42.5. eph. 4.12. heb. 2.12.

26 Guc dugu bada sinhesten * ecen nehor eztela bere gain appartatzeco, ez bere manera bereci batez contētatzeco, baina guciéc elkarrequin behar dugula beguiratu eta entretenitu Eliçaren vnitatea eta battassuna instructione communeta eta Iesus Christen vztarrira submettitzen garelaric: eta haur, non-ere Iaincoac bere hitzaren araura Eliça politiatubat eçarri baituque, * Magistratuac edo hayen edictac contrario liraten orduan-ere: eta diogu Eliça hunetara rengeatzen eta biltzen eztiradeñéc edo hartaric separatzen diradenéc Iaincoaren ordenançá hausten dutela, eta hari contrastatzen çaitzala.

*Act. 4. 19.20. heb. 10. 25.

*Iere. 7.4. 8.11.12. mat. 3.9. eta 7.22. eta 24.5.

27 Guc dugu sinhesten * ecen çorrotzqui eta Scripturaren arauezco raçoin eta iugemendu batez gogoatu eta eçagutu behar dela cer eta cein den eguiazco Eliçá:

ceren titre eta icen hunez sobera gaizqui nehorc abusatu vkan baitu. * Guc bada Scripturaren araura diogu ecen Eliçá dela Iaincoaren hitzari, eta hartaric dependitzen den religione purari gogotic iarreiquitera iunctatzen eta behatzen çayon fidelén compainia, hitz hartan batbedera bere mende gucián probetchatzen eta Iaincoaren beldurrean aitzinaratzen eta confirmatzen delaric ardura guehiago aitzineratu eta auançatu behar denaren araura: * ordea cembat-ere fidelac hitz hunen araura vicitzé enseya baititez-ere, bethi bere bekatuen barkamenduaren vkaitera bere recursa vkan behar duté. * Baina eztugu erran nahi, fidelén eta onén artean eztiradela hypocritác eta reprobatuac-ere: baina halacoén malitiác ez gaichtaqueriác ecin empatcha deçaque Eliçá ezten Eliça.

*Eph.2.20 eta 4.11.12. 1.ti.3.15. deut.31.12

*Rom.3.

*Mat.13. 2.tim.2.18 19.20.

28 Eta sinheste hunen araura * guc dugu protestatzen eta declaratzé ecen Iaincoaren hitza recebitzen eta haren suiet içateco professioneric eguiten, eta eguiazqui Sacramenduric administratzen eztén lekuan, nehorc propriqui minçatzera ecin erran deçaquela han Eliçaric dela. Eta causa hunegatic guc ditugu abhorritzen Aitassaindu erraiten denaren arauezco synagogác eta cógregationeac, ceren hetaric Iaincoaren eguiazco hitza banitu eta accotatu içen baita, eta Sacramenduac hayen artean corrúpitu, falsificatu eta choil ezeztatu içan baitirade bayeta ceren idolatria eta superstitione gucia hetan baita bogatan: * Guc daduçagu bada ecen halaco eguitatetã nahastatzen eta participatzen diradenéc, Iesus Christen gorputzetic eta haré eguiazco Eliçatic bere buruac separatzen eta trencatzen dituztela. Guciagatic-ere ceren cerbait Eliça-restança appur baita oraino Aitasaindutassun erraiten denean, eta guciz ceren Baptismoaren substantiá gueldítu içan baita, eta berçalde * ceren Baptismoaren efficacioa eta verthutea ezpaita hura administratzen duenaganic dependitzen: guc dugu aithortzen eta erraiten ecen han behin batheyatu içan diradenac eztiradela berriz batheyatu behar. Baina hartan-ere eguiten diraden corruptioneagatic, guc diogu, nehorc ecin haourrac Iaincoaren ordenançari bidegabe eguin gabe hartara presenta ahal ditzaquela.

*Mat.10. 14.15. ioan.10. 1.cor.3.

*2.Cor.6. 14.15.16. 1.cor.6.15.

*Mat.3.11 eta 28.19. marc.1.8. act.1.5. eta 11.15. 16.17. eta 19.4.5. 6.

*Act.6.3. 4.5. eph.4. 1.tim.3. tit.1. mat.18.17.*

29 Eguiazco Eliçaz den becembatean, * guc dugu finhesten ecen hura behar dela gobernatu Iesus Christ gure Iaunac ordenatu eta eçarri vkan duen politiaré araura, eta hartan behar diradela Pastorac, Surueillantac eta Diacreac, doctrinaren puritateac bere cursua duéçát, eta faltác corrigituz eta corrigi eraciz, paubreac, eta berce affligitu guciac bere beharretan sustengatuz, congregationeac Iaincoac manu beçala handién eta chipién edificationetan eguin ditecençat.

**Mat.20. 26.27. eta 18.2.3. 4. 1.cor.3. eph.1.22. col.1.18.19*

30 Guc dugu finhesten * ecen eguiazco Pastor oro, nóere baitirade, bere officioaré exercitatzeaz den becembatean, cein bere lekuetan authoritatez eta puissançaz bardin diradela, Buru bakoitz baté azpico diradelaric, cein baita Iesus Christ Iauna Ipizpicu subirano, eta vniuersal bakoitza. Eta causa hunegatic, ecen eceinere Eliçac eztuela dominationeric ez iaurgoaric vsurpatzeco berce Eliçaren gainean.

**Mat.28. 10.19. marc 16.15 ioan.15.16 act.1.21. eta 6. rom.10.15 tit.1.5.6.7 *Gal.1.15. 1.tim.3.7. 8.9.10.15. *Act.15.2 6.7.25.28. rom.12.6. 7.8. 1.cor.14.*

31 Guc dugu finhesten * ecen nehor bere buruz ez bere authoritate propriz Eliçá carguric vkaitera eztela auançatzeco: baina haur behar dela eguin electionez, Iaincoac permettitzen duen eta eguin ahal dadin lekurano. Eta exceptione haur eratchequiten dugu expressuqui, ceren cembeit orduz, bayeta gure demborán, Eliçaco statua gucietan corrumpitua cenean, behar içan baita Iaincoac façoin extrordinario batez igorri eta eçarri vkan duen gende. Eliça desolatuén dreçatzeco eta chuchenceco. Baina nola-ere içan baita, guc dugu finhesten ecen regla hunetara nehor conformatu behar dela: *eta Pastor, Surueillant eta Diacre guciéc testimoniage behar dutela, nola bidezqui deithu içan diraden.

*2.cor.12.7. 8. *Mat.18. 17. 1.cor.5.6. 1.tim.1.20 *Rom.16. 17.18.*

32 Guc dugu halaber finhesten * ecen on eta behar dela superintendent içateco elegitu diradenéc, gogoa eta ordena deçaten elkarren artean Eliça gorputz guciaren regimenduan cer moien eduqui behar den: * baina Iesus Iaunaz eman içan çaicun ordenançatic neholetanere aldaratu gabe: eta hunec eztu empatchatzen eztén ordenança particularic lekuén eta gendén araura.

*1.cor.3.11. col.2.6.7.8 gal.5.1.*

33 Baina hunen gainean * beretzen eta iraizten ditugu, nehorc Iaincoaren cerbitzu balirade beçala, cóscien-

tién cargután eta ſuiectionetá eçarri nahi lituqueen inuentione humano eta legue guciac: baina ſolament acceptatzen eta recebitzen dugu concordiaren eta bataſſunaren entretenitzeco, eta lehenaganic azquenerano-coaren obedientiatan eduquiteco on eta moldezco den ordenança gucia. *Eta hunetan iarreiqui behar guiaizquió, excommunicationeaz den becembateá, Ieſus Iaunac declaratu vkan duenari, eta hura dugu approbatzen eta laudatzen, bayeta confeſſatzen ecen bere forma eta dependentiá ororequin neceſſarioqui eduqui eta beguiratu behar dela.

*Mat.18. 17. 1.cor.5.4.5 6. 1.tim.1.20

34 Guc dugu ſinheſten* ecen Sacramenduac Hitzari iunctatuac diradela eta hari datchetzala, gure confirmatione handiagotan Iaincoaren gratiaren bahi eta erres dituguncat, eta moien hunez, gutan den infirmitatearen eta groſſertaſſunaren cauſaz, gure fedea ſolagea eta aiuta dadinçát: eta dugu ſinheſten ecen Sacramenduac diradela* halaco ſigno exterior eta merca viſible, non Iaincoac heçaz operatione eguiten baitu bere Spiritua-ren verthutez, deus alfer hetan ſignifica eztieçaguncát: *guciagatic-ere guc daducagu ecé hayen ſubſtantia eta eguia gucia Ieſus Chriſt Iauneá dela, eta baldin nehorc harenganic ſepara baditza eztiradela itzal eta lanho baicen.

*1.Cor.10. eta 11. 23. 24. exod.12.3. mat.26.26 27. rom.4. 11. 1.cor.11. 23.24. *Gal.3. 27 eph.5.26. *Ioan.6. eta 3.

35 Eta guc dugu confeſſatzen* ecen bi Sacramendu diradela ſolament, eta hec diradela Eliça guciaren commun: eta hetaric lehena, baita Baptiſmoa, eman içan çaicu gure adoptionearen certificançatan: ceren han charthatzen baicara Ieſus Chriſten gorputzarequin, haren odolaz ikuciric eta chahuturic, haren Spirituaz ſainduqui vicitzera arramberrit gaitecençat. *Guc daducagu halaber, ecé behin baicen batheyatzé ezpagara-ere, hartan ſignificatzen eta aditzera emaiten çaicunaren probetchua, gure vici gucira eta hilera heltzen dela, ſignadura eta cigulu irautetacobat duguncát, nola Ieſus Chriſt iuſtitia eta ſanctificatione içané çaicun: eta Baptiſmoa içanagatic fedezco eta penitétiazco Sacramendubat, *badaric-ere Iaincoac bere Eliçan recebitzen dituenaz gueroz haour chipiac bere aitequin, *guc dugu

*Rom.6.3. 4.5. tit.3.5.6. act.22.16. *Mat.3.11 12. marc 1.4. eta 16.15. luc.3.3. act.13.24. eta 19.4. rom.6.22. 23. *Mat.19. 14. 1.cor.7.14 *1.Cor.10. 16.17. eta 11.24.

erraiten ecen fideletaric engendratu diraden haourrac Iesus Christen authoritatez batheyatu behar diradela.

36 Guc dugu confessatzen eta eduquiten ecen Cena saindua(baita bigarren Sacramendua) dela Iesus Christequin dugun battassunaren testimoniagebat eta certificançabat,ez solament ceren guregatic behin hil eta resuscitatu içan den,*baina ceren bere haraguiaz eta odolaz eguiazqui substantiatzen eta hatzen-ere baiquaitu, harequin bat garençat,eta haren vicitzea commun duguncát.*Eta mũduaren iugeatzera dathorren arteranocotz hura ceruan içanagatic,*guc dugu sinhesten ecen harc bere Spirituaren verthute secretuz eta comprehendi ecin daitenez, bere gorputzaren eta odolaren substantiaz hatzen eta viuificatzen gaituela.Baina guc diogu ecen haur eguiten dela spiritualqui, ez effectoaren eta eguiaren orde imaginationeric edo pensamenduric eçar deçagunçat, baina ceren mysterio hunec bere gorataslunaz gure adimenduaren neurria, eta ordenança natural gucia iragaiten baitu: eta labur erraitera, ceren celestial baita,fedez baicen ecin comprehendi daite.

*Ioan.6.56 57. eta 17.21. 22. *Marc 16. 19. act.1.11. eta 3.21. *1.Cor.10. 16. ioan.6.

37 Guc dugu sinhesten, erran den beçala,ecen hambat Cenán nola Baptismoan Iaincoac realqui eta complituqui emaiten draucula effectez eta eguinez hetan figuratzen eta representatzen çaicun gucia : eta halacotz, emaiten çaizquigun signoequin guc dugu iunctatzen eta bat eguiten han presentatzen çaicunaren possessione eta gaudimendũ eguiazcoa : eta raçoin hunegatic diogu ecen Iesus Christen Mahain saindura fede purbat, vnci baten ançora,ekarten duten guciéc , eguiazqui recebitzen dutela signoec testificatzen dutena : erran nahi da, *ecen Iesus Christen gorputza eta odola hain diradela arimaren ianhari eta edari, nola oguia eta mahatsarnoa baitirade gorputzaren.

*1.Cor.11. ioan.6.

38 Bada guc daducagu* ecen vra element caduc eta deseguiten den-bat içanagatic,harc, Iesus Christen odolaz eta haren Spirituaren efficacioz eguiten çaicun barneco ikutzea testificatzen draucula : eta ecen Cenán emaité çaicun oguiac eta mahatsarnoac eguiazqui substantiatzen eta hatzen gaituela spiritualqui:*ceren,nola

*Ro.6.3.4. *Ioan.6. 1.cor 11.

hartacotzat ordenatu içan baitirade, beguién aitzinean beçala eracuften baitraucute ecen Iefus Chriften haraguia dela gure vianda, eta haren odola dela gure edari. Eta abhorritzen ditugu figno eta merca hauc recebitu nahi eztituzten fantafiaçu eta Sacramentario guciac, * Iefus Chriftec pronuntiatu vkan duenaren gainean, Haur da ene gorputza: eta, Copa haur da ene odola.

*Mat.26.16. 1.cor.11.

39 Guc dugu finheften * ecen Iaincoac nahi duela mũdua dé gobernatu leguez eta politiaz, munduco guthicia deſordenatuén reprimitzeco eta hertſeco cerbait brida dençát: eta hartacotzat ordenatu vkan duela Reſumác, Republicoac, eta berce Principaltaſſun guciac ſucceſſionez liraden, bayeta iuftitiaren ftatuari appartenitzen çayón gucia: eta Iaincoa bera nahi da heraco author eta iabe eçagutu, eta halacotz magiftratuén efcuan eçarri vkan du ezpatá: ez folamẽt haren manamenduetaco bigarren Taularen contra eguiten diraden bekatuén reprimitzeco eta punitzeco, baina lehen Taularen contra eguiten diradenén-ere bay. * Behar da bada, hala ordenatu duenagatic, ez folamẽt fuffri eta eder-ets deçagun fuperiorée domina deçaten, baina ohora ditzagun eta reuerentiatan eduqui, haren Loctenent eta Officiér beçala, nola eçarri-ere harc baititu halaco cargu legitimo eta faindu baten exercitzeco eta gobernatzeco.

*Exod.18.20.21. mat.17.24 25. rom.13.

*1.Pier.2.13.14. 1.tim.2.2.

40 Guc daducagu bada * ecen hayén legueac eta ordenançác beguiratu eta obeditu behar diradela, bayeta tributac, thaillac eta goitico çucenac pagatuz, behar dugula vorondate libre batez eta gogotic hayén fuiectionezco vztarria ekarri, infidel liraden orduan-ere: * baina bethiere Iaincoaren Imperio fubiranoa offo eta bere ftantean gueldi tzen dela. Eta hunen gainean guc ditugu abhorritzen, guehientaffunac eta fuperioritateac kenduric, eta iuftitiaren politia eta ordenança gucia erauciric, gauça guciac commun eta confus eguin nahi lituqueizten guciac.

*Mat.17.24.25.26.

*Act.4.17 18.19.

FINA.

# TESTAMENTV BERRICO HITZ ETA MINCATZECO MANEra difficil bakoitz batzu bere declarationéquin.

## ADVERTIMENDVA.

*CEREN baitirade Teſtamentu berrian cembeit hitz eta minçatzeco manera, vſançatan communzqui ez içanez, guciéz adi ezlitaquenic, hetango difficilenetaric batzu bildu vkán ditugu, eta hemẽ cein bere declarationearequin eçarri: ez gende iaquinſuén artean tracta abal litezquen punctuén goraqui declaratzeco, ez luçaqui erran abal litezquen raçoin gucién emaiteco intentionez: baina hec aditu faltaz iracurtzean empatchu abal luqueitenéc adi ditzatençát.*

*ABbá*, da hitzbat, Ieſus Chriſten demborán populu Hebraicoaren artean lengoage communean vſançatan cenic, eta heldu da Hebraicoén eguiazco lengoagetic, cein erran nahi baita hambat nola, Aita.

*Adarra*, hartzen da indarragatic eta verthutea gatic. Luc 1.*69*.

*Ainguerua*, erran nahi da hambat nola, Mandataria: baina cómunzqui hartzen da ſpiritu celeſtialacgatic, ceinéc Iaincoa bere vorondatearen eguitera eta executatzera cerbitzatzen baituté.

*Anaye*, deitzen diradé Hebraicoz, ez haourride diradenac ſolament, baina ahaide guciac-ere: eta generalqui hartzen denean, erran nahi da hambat anaye nola arreba, eta ez muna du hunetaco, aita-amén reſpectuz, baina Iaincoaren reſpectuz.

*Ancianoa*, çah arra er-

ran nahi da, baina Anciano deitzén dirade Eliçaco administrationearen cargua durenac. 1. Tim. 5.17. eta bercetã agueri den beçala.

*Ametsac*, erran nahi dirade Iaincoac bere Prophetey eta berce placer çueney lo ceunçala eguiten cerauzten reuelationeac. act. 2.17. eta bercetan.

*Archangelua*, da hitz compausatubat, eta erran nahi da principal, edo excellét Ainguerućn artean.

*Arimá*, hartzen da batzutan viciagatic, hala nola, math. 2.20. ioan. 13.37 eta 15.13. Batzutan, hats hartzeagatic, hala nola. act. 20. 10. Batzutan, gogoagatic edo affectioneagatic, hala nola, matth. 26. 38. marc. 14.34. ioan. 12. 27. luc. 1.46, eta. 2.35. Batzutan, nehor vici den spirituagatic, hala nola, mat. 10.28. act. 15.24: 2. cor. 1. 23: 1 pier. 1.9, 22. Batzutã, adimenduarequin den vorondateagatic eta orduan spirituaz significatzen eta declaratzen da.

*Arnoa*, hartzen da hordi ahal deçaquen edari guciagatic.

*Augusto*, hartzen da ez solament lehé emperadore hala deitzen cenagatic, baina haren ondoan empe radoregoan succeditu dutenacgatic-ere bay. act. 25 21.

## B

*Baptistá* da, batheyatzen ari denaren officioaren icena, eta attribuitzé çayo icen haur Zachariasen seme Ioannesi, ceren hura lehenic batheyatzen hassi içan baitzén.

*Bazcoa* da, hitz Hebraicobat, eta erran nahi da passagea edo iragaitzea: baina hartzen da hambat Israeleco populuari Iaincoac Egypteco captiuitatetic retiratuz eguin vkan ceraucan deliurançaré cómemorationetan iaten cé Bazco-bildotsagatic, nola vrthe orozco besta solennellagatic.

*Beelzebub* Idola icébat da, eta bere fundamenta vlietaric du, raçoina cerga tic, ezta orain cegay luçaquiago hemé erran dadin. Baina ceré fama hãditaco idolabat baitzén, deabrua gatic hartzen da idolazco hastioaren handiz.

*Bekatore*, hitz hunen lè kuan eçarri vkan dugu anhitzaté, vicitze gaichtotaco, nehor engana eztadin-

çát, integroqui iusto eztitadenacgatic hartuz: eta orduan hartzen da gaichtaqueria orotara emanac diraden gendeacgatic.

*Bekatua*, significatione communaz berçalde, hartzen da guiçonaren naturán regnatzen duen gaichtaqueriaren erroagatic: eta sensu hunetara aditu behar da Rom. seigarrenean eta çazpigarreneã. Batzutan hartzen da halaber, bekatuén satisfactionetan offrendatzen cen sacrificioagatic, ceren Iaincoaren iugemenduaré malediktionea hartan eçarten baitzén, bekatorea chahu licençát. Eta halacotz Iesus Christ, ceren molde hartara guregatic offrendatu içan baita, deitzen da bekatu. Rom. 8. 3: 2. cor. 5. 21.

*Benedicatzea*, errã nahi da laudatzea, hala nola erraiten dugunean, Benedica deçagun Iaincoa. Batzutan, hartzen da esquer eta remerciamendu emaiteagatic. Eta batzutan sanctificatzeagatic edo consecratzeagatic. 1. cor. 10. 16

*Bide Sabbathocoa*, cen Sabbathoã ioaitera sori cé becembat, baitzén bi milla vrrhets, Franciaco lecoatchobat baino gutichiago.

*Blasphemioa*, dá hitz Grecbat, eta errã nahi da, iniúria edo gaitzerraitea. Baina particularqui hartzen da Iaincoari eguiten çayón iniuria eta opprobrioagatic.

*Borthác*, iffernuco borthác hartzen dirade fortaleçacgatic edo munitione acgatic: ceré hirietaco fortaleçá baita borthetã principalqui.

*Bur-heçur* edo *Caluaria* hartzen da hilaren bur heçur haraguiric eztuenagatic. Eta halacotz Iesus Iaunaren crucifica lekua deitzé cen bur-heçur, edo bur-heçur Caluaria, edo Caluaria, ceren hilén heçur anhitz baitzén leku hartan.

## C

*Cesar*, hartzen da empe radore Romano guciagatic, hala nola, act. 25. 12, Claudegatic, eta Philip. 4. 22. Nerongatic.

*Cetá*, hitz hunez vsatu vkan dugu cembeitorduz, Grec-ez *Byssos* erraiten denaren significatzeco, ceñ erran nahi baita liho fin crespá irudi duembat: eta harçaz vsatzen çutén, orain taffetasaz vsatzen den

beçala.

*Christ*, erran nahi da hã bat nola vnctatua, baina haur da Iesus Christ Iaunaren titre propria, ceren vnctione spiritualez, erran nahi baita, Spiritu sainduaren gratiaz consecratu içan baita bere Aita Iainco Iaunaz, Sacrificadore subi rano, Regue, eta Propheta içateco.

*Ciguilatzea* hartzen da approbatzeagatic eta laudatzeagatic. ioan. 3. 33: eta 6. 27.

*Colonia*, act. 16. 12. mentione eguiten den beçala, lehenago deitzen cen hala cembeit hiri conquestatu berriric, eta hartara igorten cen habitatzera, edo cein hiri hãditaric idoquirico gendaldebat, eta hec bethiere vsatzen çuten bere lehen ceuden hirico leguéz, çuçenéz eta priuilegioéz.

*Commun*, erran nahi da polluitua edo satsua, ceren satsutze baitzén Iuduén Gẽtilequin nahastecatzea eta hequin cõmunicatzea.

*Copá*, hartzen da cer-ere formataco nahi den edal vnciagatic, ceren hitz Grecoéc ezpaitute forma bereciric exprimitzen. Batzutan hartzen da crutze edo tribulationeagatic ceren Iaincoac bere fideley, ceini bere afflictione partea, edal vnciaz beçala distribuitzen eta partitzen baitrauẽ, behar dela dacus sanaren araura.

## D

*Descriptionea*, hartzen da personén contuagatic, hala nola princebatec bere suietén cõtua iaquin nahiz, hec enrolla eraciten balitu.

*Dineroa* cen moneda motabat hamalaur ardit Franciaçoric valio cituenic: baina batzutan hartzẽ da dinero tornés batagatic-ere.

*Drachma* cen dineroac becembat valió çuen peçabat, eta *didrachmác*, doblea.

## E

*Eliçá*, hitzez hitz erran nahi da congregationea, edo biltzarrea: baina Testamentu berrian hartzen da Iesus Christen icenean, berac ordenatu duen ordenançarẽ araura biltzen diraden fidelén compainiagatic.

*Erhia*, Iaincoarẽ erhia erran nahi da, Iaincoaren

verthutea ceinez obratzen baitu.

*Escarlata* hitz haur batzutan hartzen da purpreare n lekuan, ceren purprearen vsagea gure artean ezpaita commũ, batetic bercera differentia handia bada-ere.

*Escua*, batzutan hitz haur hartzen da indarragatic: baina significatzen du halaber ministerioa eta cerbitzua, hala nola, erraiten denean ecen Iaincoac deliuratu duela bere populua, eta eman duela bere Leguea Moysesen escuz.

*Euangelioa*, hitz haur erran nahi da hambat nola berri ona: baina specialqui hitz hunez significatzẽ da Iesus Christez manifestatu içan çaicun gratiarẽ eta misericordiaren predicationea.

*Euangelioaren sacrificatzea*, da Euangelioaren predicationez sacrificio eguitea, arimác Iaincoari offrendatuz. Rom. 15. 16.

*Exorcista*, erran nahi da deabruén cõiuraçalea, nola lehenago baitzén hautaric populu Iudaicoan. act. 19. 13.

F

*Fedea*, hartzen da ordinarioqui, fidelec Iaincoa baithan duten sinhesteagatic, edo haren misericordiáz eta eguiáz duteñ persuasioneagatic eta seguranç agatic: eta singularqui Euangelioco promessarẽ araura Christinoéc Iesus Christen gratiáz eta eguiáz behar duten segurançagatic. Iaincoaren fedea erraiten denean, batzutan erran nahi da eguia bera, edo Iaincoac bere erranén complitzez beguiratzen duen fidelitatea, hala nola, Rom. 3. 3. Batzutan fedea hartzen da gaichtoéc eta menospreciaçaléc Iaincoaz dutén eçagutze arin batagatic. iacq. 3. 17. Bayeta miraculu eguiteco dohainagatic. 1. cor. 12. 9. eta 13. 2.

G

*Gendarmeria*. Ceruco gendarmeriá, hartzen da Ainguerüen companiagatic, ceren baitirade Iaincoaren gendarmés beçala, eta haren puissançaren ministre beçala. Baina act. 7. 42. hartzẽ da ceruco iguzqui, ilhargui eta içar guciagatic: ceren baitirade armada ordenançán iarribat beçala.

*Generationea*, significa-

tione communaz berçalde hartzen da, adinagatic eta mendeagatic. matth. 24.34. Luc 1.48.

*Grec*, bere gaineco populubat hala deitzé denic içanagatic, S. Paulen epistoletan hartzen da generalqui Gentilacgatic, ceré natione haur baitzén famatuena Iuduén artean.

*Guertha cedin*, eçarri dugun lekuan, Grecac emaité du, eguin cedin: baina minçatzeco manera hunez vsatu vkan dugu, ez hala erraiten dugunean, ignorantac minço diraden beçala, venturazco edo tropuzco gauça dela erran nahi dugulacotz, baina légoagean moldezcoago itzeuquiz, eta Francesari iarreiquiz.

*Guertha eztadila* erraiten denean, hartzeco da, ez gauçác hala heltzeco perilic balu beçala, baina neholere ecin hel daitelaco repostatan.

*Guiçona*, Scripturã hartzen da, guiçon eta emazte, chipi eta handi guciacgatic.

*Guiçon çaharra*, erran nahi da gutaric eta gure naturatic heldu den conditionea, ceren guc Adamganic dugun gucia corruptionetara ari baita. Ecen arimá kotsatu eta poçoatu içan da bekatu originalaz. eta halacotz da gorputza herioaren eta vsteldu içatearen suiet. Eta cõtrariora, *Guiçon berria* erran nahi da, Spiritu saindu aré gratiaz regeneratu eta arramberritu dena. *Campoco guiçona*, edo *exteriora* S. Paul baithan hartzen da munduari appertenitzen çayón gauça guciagatic, hala nola, ohore, onassun, abrastassun, credit guciagatic. Eta *barneco guiçona* edo *interiora*, erran nahi da, Iaincoaren resumán seculacotz vicitzeco guc dugũ arramberrimédua: eta labur erraitera, arimari hunquitzé çayón gauça gucia.

## H

*Hallelu-ia*, bi hitz Hebraico dirade, eta hambat valio dute nola, Lauda eçaçue Iaincoa: berehala vtzi vkan dugu cambiatu gabe: ceré S. Ioãnec Grecquez scribatu badu-ere, hitz Hebraicoa expressuqui eduqui nahi vkan baitu.

*Haraguia*, batzutã hartzé da simplequi berce cõsiderationeric gabe, guiço

nagatic. Batzutan, eta prin cipalqui S. Paul baithan, guc gure lehen aitaganic dugun natura corrũpitua-gatic, eta significatione hu netan guiçona gucia comprehenditzen da regenera dadin baino lehen: baina regeneratu ondoan, haren natura carnalaren reliqui-aegatic hartzen da.

*Heresia*, erran nahi da secta. Hereticoa da secta berecíric appart eguité duena ezpa daducana, Christinoén vnionetic eta battassunetic lekora.

*Hira*, hartzen da, Iaincoac bekatoreac punitzen dituẽ iugemenduagatic eta mendequioagatic: ez Iaincoac hissiric ahal duquelacotz, baina ceren guiçonéc, cehatzẽ diradeneã, asserre baliz beçala hura senditzen baitute.

*Holocaustia* cẽ, halaco sacrificio, non gucia erratzẽ baitzén, eta handic du icena-ere: baina hartzen da bercén gainetic excellent eta singulár den sacrificio-agatic.

*Idolá*, hambat erran nahi da nola imaginá, edo cerbait represẽntatzẽ duẽ figurá: baina Scripturán hitz haur hartzen da, deuotionez eguin içan den eta nehorc saindu eduquiten duen imaginagatic. Idolatreac dirade, hec ohoratzẽ dituztenac. Idolatriá da nehorc idoletara duen deuotionea eta reuerentiá. Eta idolá hartzen den significatione berean, hartzen da imagina-ere.

## I

*Ipizpicua*, errã nahi da hambat nola Surueillant, edo Superintendent: baina commũzqui Eliçaren gobernatzeco ordenatzẽ den Pastoragatic hartzen da.

*Itsassoa*, ezta bethi guc lengoage cõmuneã hartzẽ dugũ beçala hartzẽ baina Iudeaco herriã cẽ Genezaretheco lac agatic ere bay

*Iustificatzea*, commũzqui hartzen da iustotzát eduquiteagatic: eta S. Paulec erraiten duenean, iustificatzen dela guiçona Iaincoaren aitzinean, manera hunetara aditzen du, ecen erran nahi da, iusto estimatzen dela: eta erraiten duenean ecen fedez guiçona iustificatzen dela, erran nahi da, ecen Iaincoaren gogaraco dela, ez bere iustitia propriz, baina Iesus Christen causaz, ceinẽ gratiaz bere bekatuén barka-

mendua fidelari eguiten baitzayó, iusto balizbeçala eçagut eta recebi dadiçát. Iaincoaren, edo haren çuhurtziaren iustificatzeada, haren approbatzea eta lau datzea, gloria eman daqui onçát. matt. 11. 19. eta luc 7. 29. Leguearen iustificationeac edo ordenãçac. luc. 1. 6: dirade, harc eman ditué manamenduac: ceren hura baita iustitiazco regla eguiazcoa. S. Paulec raçoin beragatic Leguearen iustificatione deitzen ditu: ceré hartan iracasten baitzaicu iustoqui eta sainduqui vicitzeco formá cein den.

*Legionea*, cen gendarmesezco bãdabat, ordinari oqui hamar milla oinezco ré eta borz ehun çamarizcoren contucoric: eta batzutan gutiago edo guehiago: batzutan hartzen da, armada erraiten baguendu beçala.

*Letrá*, hartzé da S. Paul baithan, bihotzerano hunquizté eztuen predicationeagatic, Iaincoac hura bere spirituaz valia eraciten eztuenean. 2. cor. 3. 6. Edo Sacramenduetaco signo exterioragatic, eguiá signoarequin batean eztenean. rom. 2. 27. 29.

*Lokartzea* batzutan erran nahi da hiltzea: eta lo daunçanac, hilac: baina haur gorputzaz aditu behar da eta ez arimáz: ceren gorputz hilbat baita higui tzeric ez maneiuric batre gabe, lo datzãbat beçala.

## M

*Monument*, hitz hunen significationea aitzinago latinaren araura hedatzen bada-ere: sepulchreagatic hartzen da Scripturán.

*Mendecoste* erran nahi da berroguey eta hamargarrena, eta hura cen fructuen primitién offrendatzeco bestabat, bayeta Spiritu saindua Apostoluen gainera iaitsi içan cen eguna.

## O

*Orena* ezta Scripturán orain vsatzen dugun manerara hartzen, ecen lehenago eguna luce bacén labur bacén, iguzquiaren ilkitetic sartzerano partitzé cen hamabi orenetara, eta orenac luce-laburrean ciraden egunaren araura.

*Osanna*, edo (hobequi scribatzera) *Hosiah-na*, Hebraicozco sententiabat da, eta hambat erran nahi da nola, Othoi, salua, be-

guira eta mainteni eçac:eta othoitztebat da.psal.118 25 hartua,eta populuaz applicatu içã çayó Iesus Iaunari,bere azquen Ierusalemen eguin çuen sartzean, nola respectu hartara Dauid-ez eguin-ere içan baitzén.

*Ogui propositionecoac*, ciraden, hamabi ogui aste oroz templeã hartacotzát ordenatu cẽ taula gain batetara presentatzen ciradenic,eta han vtziten ciraden ondoco astean nehorc eçar leçaqueno berceric: nola baita scribatua.Leuitic. 24.5.

P

*Patriarchá*, erran nahi da,aitén artean principal. Eta halacotz Iacob-en hamabi haourrac, (cein içan baitirade populuco hama bi ondoac ezpa erroac beçala) Patriarcha deitzen dirade, eta principalqui Dauid.

*Personá* Scripturã maiz erran nahi da,nehor mũ duaren arauez ohora edo menosprecia eraciten duẽ campotico apparentiá, hala nola,abrats edo paubre: noble edo vilaun, nabussi edo muthil, Iudu edo Gentil, edo cerbait berceric içatea.ma.22.16: act.10.34

*Premitiác* ciraden,heta ric ian gabe, Iaincoari offrendatzen çaizquion lehen fructuac, eta hura cen sanctificatione motabat, gueroco vsagea saindu eta pur licençát.Hitz haur lehen hatseagatic-ere hartzen da batzutan, hala nola.rom.8.22.

*Preputioa* da, Circonciditzean edequitẽ cen larru chapoa, baina hartzen da Circoncisionearen contrarioagatic-ere, hala nola erraiten denean ecẽ guiçona preputioan dela, circonciditu gabea dela errã nahi da. Batzutan Gentilacgatic-ere hartzen da, hala nola.rom.2.27.

*Pretorioa*,erran nahi cẽ lehenago,hambat princearen edo Gobernadorearen palatioa, nola iudicatzeco lekua:eta Testamẽtu berrian hartzen da ham bat significatione batean nola bercean.

*Proconsul*, errã nahi da Prouinciaco gobernadore dignitate principalean dẽbat,eta da Romaco empa radoregoaren ordenançatic eta costumatic hartua den icen-bat.

*Propheta*, da propriqui hura,ceini Iaincoac ethor-

tzeco diradẽ gauça estalién reuelationea declaratzeco bothererequin eta cargure quin eman baitrauca: baina S. Paul baithan hartzẽda bercetaric abantail Iain incoarẽ vorondatearendeclaratzeco dohain singulara duena: eta Prophetiá da hala eguiteco gratiá eta officioa.

*Propitiatorioa*, Legueã cen bi Cherubinen hegalez estalia cen arkaren bal dia: eta ceren baitzén Iain coaren presentiarẽsignoa, propitio, amatigatu eta asserre gabe, bere populua baithara eracusteco, hura cẽ IesusChristẽ figura. Eta Halacotz deitzẽ da Propitiatorio. rom. 3. 25. ceinen amorecatic Iaincoa amati gatu içan baita, eta fauore bere fideley ekarten baitraue.

*Proselytoa*,, hambat erran nahi da nola nouitioa edo berrizqui compainia bati eratchequia: baina har tzen da Iuduén religionera conuertitu berri ciradenacgatic.

R

*Racha*, da hitzbat significatione bereciric eztuenic fascheria edo menosprecio eracusteco baicen, nehor hurcoaren contra despitatzen edo asserretzẽ denean.

*Redemitzea* erran nahi da rançoinarẽ precioz ber ceren escuan cenaren derdemiatzea, idoquitea eta deliuratzea.

*Repos*, ikus *Sabbathoa*

*Resuma*, Ceruëtaco resumá da Iaincoac bere populuaren gaineã duen gobernamẽdu spirituala, ceinez hatsen baita vicitze celestiala Spiritu sainduaz arramberritu diradenetan. Eta cerẽ Iaincoac bere Semearen personân regnatu nahi baitu, eta hura mundu hunetara igorri vkã bai tu gauça guciac haren suiectioneco eguin litecençat: causa hunegatic Iesus Christen ethortea eta harẽ munduraco manifestationea deitzen da ceruëtaco Resuma. matt. 3. 2. Eta ceren IesusChristec bere Resumá dispausatzen eta gobernatzen baitu bere Euãgelioaren predicationearẽ moïenez, maiz ceruëtaco resumá hartzen da Euangelioaren predicationeagatic. matt. 13. 24. Batzutan resurrectionearen ondoan içanen den Iaincoaren Resumaren complimendua-gatic eta perfectioneaga-

tic.matt.7.21.

*Sabbathoa*, errã nahi da reposa, eta berehala hitz bera eduqui vkan dugu, ceren Euangelistéc Grecquez scribatzean, lengoage hartaco ezpacen-ere, ezpaitute cambiatu vkan. Eta hura cen asteco çazpigarren eta azquen eguna, orain batéclarambate, bercec eguiacoitz eta bercéc nesquen egun deitzen duguna: baina batzutan hartzen da aste guciagatic-ere, eta halacotz erraiten da Sabbathoaren lehena, bigarrena, herena.

*Sacrificadorea*, erran nahi da, Iaincoaren populuaren reconciliagarri sacrificio offrendatzeco officioa. Eta officio haur cen populu Iudaicoan Iesus Christ ethor cedin baino lehen: baina harc ethorri içan denean fin eman vkan draue Moysesen Legueco figura guciey. Eta Sacrificadoretan batetic bercera bacen differentia, ecen batzu aldarera hurbiltzen ciraden Iaincoari offrendatzera, eta hec deitzen ciraden principal, Leuiten respectuz: eta Leuitac ciraden mendreago eta cerbitzu beheragotara deithuac. Baina bacén gucien gaineco guehiébat, cein sur birano deitzen baitzén, eta hunec representatzen çuen Iesus Christ bercec baino specialquiago.

*Saindu*, errã nahi da Iaincoari dedicatua, consecratua eta sacrificatua: eta hunen cõtrarioa da profano. Baina fidel guciac saindu deitzen dirade, ceren Iaincoac bere Spirituaz sanctificatu baititu, mundu hunetaco satsutassunetaric eta corruptionetic retiratzeco. Iaincoa bera-ere Saindu deitzen da bayeta haren Aingueruac: eta erran nahi da Excellent, gucizco estimatione handitã eduqui behar den gauçabat beçala.

*Sandaleac*, ciradé abarca edo berce oinetaco arin eta aisit batzu.

*Scandaloa*, errã nahi da trebucamendua edo behaztopea, nehor bidean edo cerbait berce gauçatan trebucatzen baliz beçala.

*Scandalizatzea*, erran nahi da trebucatzeco edo behaztopatzeco occasione norbeiti emaitea. Eta ceren Iaincoaren hitza bidebat beçala baita, scandalizatze hitz haur hartzen da, hartan bide beçala ioaitetic nehor empatcha a-

hal leçaqueen gauçaré e-
çarteagatic.

*Scribá* erran nahi da hã
bat nola doctor, ecen hala
deitzen ciraden Iudeuén ar
tean iaquinsu estimatzen
ciraden guciac.

*Semea, Guiçonaren Semea* hartzen da Christga-
tic, haren natura humano-
aren eguiá expressuquia-
go eracuts dadinçat.

*Signoac*, hitz haur maiz
hartzen da miraculuacga-
tic, ceren heçaz eracusten
baitu Iaincoac bere puis-
sança miraculuzcoa, ira-
catsi nahi duenaré aditze-
ra guiçonac iratzar ditzã-
çát. Cembeit orduz har-
tzen da cerbait significati-
one ekarten duen gauça
vsatu ezten batagatic-ere.

*Spiritua*, batzutan errã
nahi da guiçonarenarimá,
batzutan berce creatura
inuisibleric eta gorputz ga
beric, hala nola, Aingue-
ruac, Deabruac. Batzutan
essentia spirituala simple-
qui, hala nola, ioan. 4. 24.
Batzutan Iaincoaren Spi-
ritu saindua, cein baita Ia-
incoaren verthute essenti-
ala, hura baithan residitzé
delaric. Batzutan hartzen
da harenganic proceditzé
diradégratiacgatic, eta spe
cialqui fidelég recebitzen
duten regenerationezco
dohainagatic: eta manera
hunetan, spiritua haragui-
arequin comparatzen de-
nean, guiçonaren parte re-
generatuaz hartu behar da
hala nola. rom. 7. 6: eta 8. 4
Gal. 5. 16. Batzutan adimé
duagatic edo raçoinagatic
ere bay. 1. Thess. 5. 23.

*Stadioa*, cen spatio la-
stercaco chedatubat: orain
nehorc barrán artzeco e-
guin baleça beçala: eta spa
tio hura cen luce seioguey
eta bortz vrrhets, baitirade
625. oin.

*Synagogá* erran nahi da
hambat nola congregati-
onea: baina hartzen da par
ticularqui Iudeuén compai
niagatic, guc Christinoén
artean Eliçá hartzen du-
gun beçala.

## T

*Talenta*, cen piçu mota
bat, eta hirién eta lekuén
araura anhitz moldetaco-
ric cé, baina guehién valio
çuena cen sey milla drach-
mataco, baitirade Franci-
aco contura hamecatan e-
hun liberaren ingurua.

*Thesaureriá*, cen Ierusa
lemeco templean offren-
dác eguiten eta eçarten ci-
raden lekua, errana cen v-
sageco beguira litecençat:

communzqui deitzen da Eliçaco Troncoa.

*Testamentua*, commũzqui hartzen da alliança solennelagatic, hala nola, Iaincoac lehenic Abrahamequin eta guero Israeleco popularequin eguin çuenagatic, cein guero confirmatu vkan baitu guregatic Iesus Christ gure Iaunarequin. Baina ceren Alliãça haur bethiere sacrificiotaco odolequin eguin içan baita, Apostolũac erraiten du, ecen hura dela, eguiten duenaren herioaz baicen ratificatzen eta cõfirmatzen ezten Testamẽtubat. Heb. 9. 16.

## V

*Veillá*, hartzẽ da costuma ancianoaren araura: ecen lehenago, iguzquia sar cedinetic ilki arterano, gauá laur parte bardinetara partitzen çutén.

*Verthuteac* edo *puissançac*, miraculuacgatic hartzen dirade: cerẽ heçaz Iaincoac extraordinarioqui declaratzenago baitu bere verthutea, ecen ez naturaren cursuaren araura eguité diradé gaucéz: matt. 13. 58.

*Vncia*, ezta solament communzqui costumatzé den beçala hartzen: baina nehor deusetan instrumẽt beçala cerbitzatzẽ den guciagatic-ere bay.

*Vnguentua*, ezta erran nahi orain nehorcvnctatzeco vsatzen duen vnguentu motá: baina olio claroa edo vr vssain onetacoac: eta harienez ancianoqui vsatzen çutén, orain nehorc perfumez edo vr vssain onetacoz vsatzen balu beçala.

## *ÇVBEROACO HERRIAN VSANÇATAN EZTIraden hitz bakoitz batzu hango ançora itzuliac.*

### A

Abolitzeá *kencia.*
Arbuyatzea, *refusatzia.*
arrachqui *ibiqui*
artha, *ansia, achola, arrangura.*
asserretzea, *samurtzia, azcancia.*
auhena, *marrascá.*
aurkan, *artecean, heinean, eretzian.*
azpian, *pián.*
azquendu, *supertu.*

B

Babaçuça, *chicherra*
beháçuna, *guibelmina.*
behatzea, *so eguitia.*
berariaz *expressuqui*

C

Cadená, *cathina.*
caltea, *damuya.*
çama, *cargá, hachia.*
cerua, *celuya.*
charthatzea, *empeldatzia.*
chistmista, *chastá.*
chitoa, *chitchá.*
ciguilatzea, *sageratzia.*
cigulua, *sagetta.*
cikotza, *chekena.*

E

Elemosyna, *aumoina,*
errota, *eihera.*
escobatzea *ekortzia*
escobaquinac, *ekorquinac.*
ey, *er*, datiuo singulariá *ari*, erraiten dena, Cuberoan eta aldirietá plu ralean erraiten da, er, eta bercetan gucietan ey: hala nola batez minçatzera erraité da heuscalerri gucian, guiçonari, emaztea ri, haourrari: eta anhitzez minçatzera, Cuberoan eta aldirietá gui conér, emaztér, haourér, eta bercetá, guc heuscarazco translatione hunetan vsatu vkan dugun beçala guiçoney, emaztey, haourrey, &c,

F

Fiadorea, *bermea.*
fitsa, *busca.*
florea, *lilia.*

G

Gaichtaguina, *briganta.*
gakoa, *guiltza.*
garastia, *kario.*
gurhiciatzea, *desiratzea.*

H

Haguitz, *guciz, chit.*
haguna, *gramá.*
harana, *sakana.*
hotsa, *açança,*
hurbil, *hurren.*
hurcoa, *proximoa.*

I

Iayo, *sorthu.*
Ichterra, *az pia.*
igorciria, *durunda.*
iguzquia, *ekia.*
iharduquitea, *debatitzia.*
ilharguia, *arguiçaguia.*
iraulzcatzea, *itzuleraûzcatzia.*
irañguitea, *erhaitia.*

K

Karmin, *mingatz.*

L

Laçoa, *lachera.*
landa, *elguia.*
larraina, *ezcaratza.*
lekorea, *elgoria.*
libre, *franco.*
lotzea, *estecatzia.*

M

Maiz, *naharo.*
mendematzea, *bernatzia.*
Mugarria, *cedarria.*

N

Neurria, *içaria.*
neurtzea, *içartzia.*
nokua, edo hebaina, *cembeit membroz impotenta.*

O

Ordaina, *ordaria.*
orhoráça *appairuya*

P

Pedaçua, *bethatchuia.*
pescadore, *arrançale.* Guehienci lekuetan arrançale erraitenagatic, heuscaldũ anhitzi, ma. 4. 19 eta marc, 1. 17. Nic eguinen çaituztet guiça pescadore hobequi itzeuquiz, ecé-ez. Nic eguinen çaituztet guiçarrançale: hala vsatu vkan dugu.
pitina, *ahugna.*

R

Resuma, *retatuia.*
reuoltari, *quereillos*

V

Vmuncia, *haourhoia.*
vrriqui, *dolu.*

# TESTAMENTU BERRICO MATERIEN ERIDEITECO *Taulá. Lehén contuac capitulua eracusten du, eta berceac verseta.*

Aingue-

B

C

D

E

I

N

Opinio-

## P

T

V

IAINCOA DELA LAVDATV.